*«Julio Urkixo» Euskal Filologi Mintegiaren Urtekariaren Gehigarriak,* LXXI
Monumenta linguae Vasconum: Studia et Instrumenta X

# FILOLOGIATIK DIALEKTOLOGIARA NAFARROAKO EUSKARAZKO TESTU ZAHARRETAN BARRENA (1416-1750)

Urtzi Reguero Ugarte

eman ta zabal zazu

Universidad del País Vasco
Euskal Herriko Unibertsitatea

Bilbao Bilbo
2019

*CIP. Unibertsitateko Biblioteka*

**Reguero Ugarte, Urtzi**

Filologiatik dialektologiara Nafarroako euskarazko testu zaharretan barrena (1416-1750) / Urtzi Reguero Ugarte. – Bilbao : Universidad del País Vasco/Euskal Herriko Unibertsitatea, Argitalpen Zerbitzua = Servicio Editorial, D.L. 2019. – XXI, 580 p. : map. ; 24 cm. – (Anejo del Anuario del Seminario de Filología Vasca "Julio de Urquijo"; 71)

Bibliografía p. [523]-538. Anexos.

D.L.: BI-02807-2019. — ISBN: 978-84-1319-120-1.

1. Euskara (Lengua) – Dialectos – Navarra. 2. Euskara (Lengua) – Historia – Textos.

809.169(460.16) (091)

Nafarroako Gobernuak lagundu du liburu honen argitalpena.

*Monumenta Linguae Vasconum* (V): periodización y cronologia (kodea: FFI: 2016-76032-P) eta *Historia de la lengua vasca y lingüística histórico-comparada* (IT 1344-19) UPV/EHUko talde kontsolidatuak lagundu dute liburu honen argitalpena.

Egileak UPV/EHUk 2010/2011 ikasturtean lau urtetarako emandako ikertzaileen prestakuntzarako laguntzari esker burutu ahal izan du lan hau (kodea: PIF10/2010/ PIF10017). Bestalde, ondoko proiektu eta talde hauen babesa izan du:

— *Monumenta Linguae Vasconum* (IV): textos arcaicos vascos y euskera antiguo (kodea: FFI2012-37696).
— *Monumenta Linguae Vasconum* (V): periodización y cronologia (kodea: FFI: 2016-76032-P).
— *Hizkuntzalaritza Teorikoa eta Diakronikoa: Gramatika Unibertsala, Hizkuntza Indoeuroparrak eta Euskara* formazio eta ikerketa taldea (UFI11-14).
— *Historia de la lengua vasca y lingüística histórico-comparada* (IT 698-13) UPV/EHUko talde kontsolidatua.
— *Historia de la lengua vasca y lingüística histórico-comparada* (IT 1344-19) UPV/EHUko talde kontsolidatua.

© Urtzi Reguero Ugarte
© Ricardo Gómez López (Hitzaurrea)
© Seminario de Filología Vasca «Julio Urquijo» / «Julio Urkixo» Basque Philology Seminar
© Servicio Editorial de la Universidad del País Vasco
Euskal Herriko Unibertsitateko Argitalpen Zerbitzua

ISBN: 978-84-1319-120-1
Depósito legal / Lege gordailua: BI-2.807-2019

# AURKIBIDEA

# MAPAK

# TAULAK

# HITZAURREA

Euskaldun bakoitzaren baitan filologo bat omen dago. Euskaldun askoren barrenean dialektologo bat ere bai, diotenez. Alabaina ez da hain erraza, Urtzi Reguerororen kasuan bezala, filologiak eskatzen duen zehaztasuna eta dialektologia historikoak nahitaezkoa duen zorroztasuna ederki uztartzen dituen norbait aurkitzea.

*Monumenta Linguae Vasconum: Studia et Instrumenta* sailean argitaratzen den liburu hau Urtzi Regueroren doktorego-tesiaren bertsio osatu eta emendatua da. Doktorego-tesia aurkeztu zuenean, 2017ko uztailean, epaimahaiko kideek goresmen handiak egin zizkioten Urtziri, baita hainbat ohar eta iruzkin ere. Urtzik iruzkin horiek eta geroztik heldu zaizkion beste batzuk ere kontuan hartu ditu bertsio berri hau paratzeko.

Urtzi Reguerok Euskal Filologiako lizentziatura egin zuen Euskal Herriko Unibertsitatean. Gero, UPV/EHUn bertan, Euskal Hizkuntzalaritza eta Filologiako Masterra; master amaierako lana Erdi Aroko euskaraz idatzi zuen, ohorezko matrikula lortuz, eta lan hartan dagoeneko dialektologia historikoarekiko trebetasuna erakutsi zuen. Ondoren, liburu honen oinarrian dagoen doktorego-tesiarekin ikerketarako bere gaitasun handia berretsi zuen. Urtzik lizentziaturako eta masterreko irakasle izan ninduen, lehenik, eta master amaierako lanaren eta tesiaren zuzendari, gero. Guztira, hamabi urte dira elkar ezagutzen dugula eta tarte horretan ikertzaile gisa izan duen bilakaeraren lekuko pribilegiatua izan naiz. Bilakaera horren emaitza adierazgarria da esku artean duzun liburua.

Liburuak bost atal nagusi ditu. Lehena sarrera da eta bertan Reguerok, besteak beste, bere hautu metodologikoak aurkezten ditu, ikergaiaren egoera zertan den azaltzen du, gero eskainiko dituen testuen fidagarritasunaz gogoeta egiten du eta bere corpusaren osaera eta haren muga geografiko eta kronologikoak justifikatzen ditu.

Bigarren atalean 1416 eta 1750 bitartean Nafarroako euskaretan idatzitako testu guztien edizioa eta iruzkina ditugu. Denbora tarte hori adituek Euskara Arkaikoa eta Euskara Zaharra izendatu dituzten garaiei dagokie (cf. arestiko Gorrotxategi *et al. Euskararen historia*). Hasteko, Reguerok testuak editatzeko erabili dituen irizpideak xeheki azaltzen dizkigu. Gainera, ahal izan duen guztietan jatorrizko eskuizkribu edo argitalpenak izan ditu edizioaren oinarri. Testuak, gero, tamainaren arabera sailkatzen ditu (laburrak, luzexkak eta, azkenik, Beriain eta Elizalderen lan luzeak) eta azpiatal bakoitza kronologikoki antolatzen du. Azpimarratzekoa da Nafarroako euskarazko testu zaharren ñabartasuna: gutunak, auzi-paperetako esaldiak, ezkontza fedeak, olerkiak, errefrauak eta, nola ez, tamainan nagusi diren erlijiozko testuak.

Guztira bigarren atalak liburuaren erdia inguru betetzen du, jarraian etorriko diren azterketen oinarri eta zimendu sendoa izanik.

Hirugarren atalak hizkuntza-ezaugarrien azterketa dakar. Testuen iruzkinetan azaldutako ezaugarri nagusiak ohiko lau multzoetan sailkatu ditu: fonologia, morfologia, sintaxia eta lexikoa; halaber, Reguerok hizkuntza-ezaugarri horien kronologia eta geografia bereziki hartu ditu kontuan, goi-nafarrera arkaiko eta zaharra euskalki gisa definitzeko asmoz. Horretarako, Nafarroako mintzoen ezaugarri esklusibotzat hartu ohi direnak noiz eta non sortu ziren miatzen saiatu da, baita goi-nafarrerak inguruko hizkerekin partekatzen dituen ezaugarriak bilatzen ere.

Laugarren atalean, Reguerok aurreko atalaren emaitzak hartu eta goi-nafarrera arkaiko eta zaharraren berrikuntza zaharrak —Nafarroatik kanpo ere gertatzen direnak— eta hedadura murritzagoko berrikuntza berrixeagoak banan-banan aztertzen ditu, bakoitza non eta noiztik daukagun zehaztuz. Bestetik, hori guztia erabiltzen du goi-nafarreraren periodizazio proposamen bat egiteko, gehienbat Joseba Lakarrak 1997tik euskara osorako proposatutakoarekin bat egiten duena. Liburua amaitzen da ondorioak, erabilitako laburdurak eta bibliografia eta bost eranskin eskainiz.

Regueroren liburuak aurrerapauso handia dakar euskara zaharraren ezagutzan, erdiguneko euskara zaharra hartu baitu aztergai. Orain arte zerbait genekien Euskal Herriko bi muturretako hizkera zaharrei buruz. Bizkaiera zaharra nahiko ondo ezagutzen dugu Lakarraren lanez geroztik. Arabako euskara ere bai, batik bat Mounolek ekialdeko Lazarraga zaharraren eskuizkribuaz eta Ulibarrik ipar-mendebaldeko *Dotrinazko Sermoitegi* berriagoaz egindako azterketei esker. Ekialdeko euskara Caminok eta Padillak ikertu dute. Halarik ere, erdiguneko euskara zaharra ahaztuxea izan dugu, ez bada Caminok berak Lapurdiko eta Nafarroa Garaiko euskara zaharren azterketa bategatik; eta askoz gehiagorik ez. Hortaz, Regueroren liburua hutsune hori betetzen laguntzera dator, oraindik zereginik franko geratzen bada ere, jakina. Besteak beste, nafar testuen corpusa zabaldu behar da, gutxienez Nafarroako Errege Artxibo Nagusian tantaka baina etengabe agertzen diren euskarazko esaldiak gehituz.

Liburuaren osaerari dagokionez, azpimarratu nahi nuke testuen edizioak eta haien azterketa linguistiko eta dialektologikoa elkarren ondoan emateak duen garrantzia. Ez da ohikoena izan gure artean, ez bada testu laburren kasuan. Horrek aukera ezin hobea ematen dio irakurleari hizkuntza-datuak eta haien azterketa lan berean aurkitzeko eta, beraz, ikerlariaren ondorioak bere kabuz egiaztatzeko. Esate baterako, irakurleak egiaztatu ahalko du Reguerok zehaztasun eta sakontasun handiz aztertutako lanabes atzendu horietatik guztietatik atera duen Nafarroako euskararen bilakabidearen ikuspegi berria.

Beste arlo askotan bezala, iraganaren berri izatea ezinbestekoa suertatzen da gaurkoa ezagutzeko. Horregatik, egun euskarak Nafarroan duen egoeraz, haren ezaugarriez eta haren aldaeren banaketaz jakin nahi duenak ere zer ikasi aurkituko du Regueroren liburu honetan. Horregatik, espero dut euskararen historiaz zein gaurko egoeraz interesa duenak liburu honekin gozatzea. Orain irakurleak du hitza.

Ricardo Gómez López
2018ko irailean

# AITZINSOLASA ETA ESKERRAK

2002/2003 ikasturtea izango zen, beharbada, artean DBHko 2. maila egiten ari nintzela Euskal Filologiako karrera egitea erabaki nuenean. Zergatia ez dakit zehatz esaten. Akaso euskarari buruz eta honen historiari buruz entzuten ziren bitxikeriei (orduan ere niretzat *bitxikeriak* ziren *berezitasunak* baino gehiago, *-keria* atzizkiak daukan ezezko karga guztiarekin) erantzun zientifikoren bat bilatu nahian edo. Batek daki. Bi urte beranduago, DBHko 4. mailan, ikastolako orientatzailearekin izandako saioak ez zuen bi minutu baino gehiago iraun; erabakia hartua nuen: Giza eta gizarte zientzien batxilergoa egingo nuen Tolosan eta latina hartuko nuen hautazko; ondoren, Gasteizen egingo nuen Euskal Filologiako lizentziatura.

Orduan filologiaz eta hizkuntzalaritzaz nuen ideia ez da orain dudana, inondik ere. Asko da orduz geroztik ikasi dudana, eta hori islatu nahi izan nuen *Goinafarrera arkaiko eta zaharra: azterketa eta testuak* (2017) izenburuko tesian. Hain zuzen ere, tesi horren zuzendariarekin, Ricardo Gómezekin alegia, izan nuen lehendabiziko harreman zuzena filologiarekin. Ziurrenik, behar baino arreta gutxiagorekin, baina lehen urteko lehen lauhilabetekoan izan genuen Alexandriako lehen filologoen berri, orduan ezagutu genuen zer ziren testuen transmisioa eta kopiatzean egindako hutsak. Orduan ezagutu genuen tesian lagun izan dudan Blecuaren 1983ko eskuliburua. Orduan izan genuen lehen kontaktua euskal filologiarekin, eskoletarako *Bertso Bizkaitar*-ren edizio kritikoa egin genuenean. Beraz, lehenik eta behin, eskerrak Ricardo Gómezi berari, bera izan baitu zuzendari eta zuzentzaile nekaezin tesiak —lehenago Master Amaierako Lanak izan zuen bezala—. Berak erantzun ditu nire zalantzak, dela posta elektronikoz dela bere bulegoan, dela astegun buruzurian dela asteburuan, eta berak zaindu eta ondu ditu nik, despistatu honek, idaztean egindako huts eta akatsak. Dena den, oraindik testuan dauden akatsak nireak besterik ez dira.

Eskerrak ematen hasita, ezin ahaztu *Aziti Bihia* hizkuntzalari eta filologo gazteen elkarteko kideak: Borja, Dorota, Eneko, Udane, Oxel, Koldo, Ekaitz, Manu, Endika, Maitena. 2012an sortu genuenetik asko izan dira gure formakuntzan lagundu duten bilerak, elkarrizketak eta eztabaidak. WhatsApp bidezko kontsultategia ere eguneko 24 orduetan egon da zabalik, edozein unetan sortu izan diren zalantzak erantzuteko. Eskerrak, beraz, *azitikideei* afizio dugun filologian jarraitzeko aukera emateagatik. Eta, batez ere Ekaitz Santaziliari, tesiko azken etapan Iruñeko Artxiboan dauden prozesu batzuetako euskarazko pasarteak bilatzeagatik eta irakurketa zuzena bidaltzeagatik. *Monumenta Linguae Vasconum* ikerketa taldekoak

eta, batez ere, «Euskal Testu Zaharren Bilduma Berria» proiektuan lanean dihardutenak ere eskertu behar ditut.

Tesia gauzatzeko zenbait bidaia egin behar izan nituen, batez ere Nafarroara, testuen jatorrizkoen argazki edo digitalizazioak eskuratzeko. Lan horretan fin aritu dira Nafarroako Artxibo Nagusiko langileak eta Iruñeko Elizbarrutiko Artxiboko Teresa Alzugaray. Eskerrak, beraz, beraiei ere. Iruñetik landara, Leitzan izan nintzen Aresoko otoitz zaharren jatorrizkoak ikusten; eta Ander Gillegi bertako apaizaren eskuzabaltasunari esker, ez nuen ikusteko inolako eragozpenik izan. Orobat, Etxalarren izan nintzenean, Pello Apezetxea Zubirik arazorik gabe erakutsi zidan 1749an Sanzberrok idatzitako dotrinaren eskuizkribua (ik. orain Reguero 2017). Eskerrik asko biei. Nafarroatik kanpo, Madrilera ere bisita bat egin nuen bertako Francisco de Zabálburu liburutegian dagoen 1609ko Iruñeko olerki sarituak jasotzen dituen liburua ikusteko. Joan, digitalizaturik ikusi eta paperezko kopiak eskuratu nituen bertako Mercedes Noviembre zuzendariaren bidez. Hari ere, mila esker. Halaber, beste bidaia batean, Madrilen eskuratu nituen Historiako Akademian dagoen Isastiren obraren kopiaren irudiak. Eskerrak, beraz, bertako langileei testua digitalizatzen egindako lanagatik. Peio Monteano Nafarroako Artxibo Nagusiko teknikariari ere eskerrak eman behar dizkiot Matxin Zalbaren gutunaren argazkia erakusteagatik, Arreko koplen berri emateagatik, bestela aurkitzea ezinezko izango litzaizkigukeen testu ezagun batzuen erreferentzia zuzena emateagatik eta beste lekukotasun batzuk bilatzen saiatzeagatik. Eskerrak Gorka Lekarozi ere zeharka, bere blogarekin, eta zuzenean emandako laguntza eta informazioagatik. Eta eskerrak Edu Zelaieta lankideari, azken momentuan Bortzirietako testuez egindako oharrengatik.

Bestalde, azterketaren osagarri, zenbait mapa sartu ditut; horietatik batzuk, erreferentzia bibliografikorik ez dutenak, neronek egindakoak dira. Hori dela eta, María Murillo eskertu behar dut 2016. urtearen akabuan, Gabonetako oporretan Andaluziako lurretan, mapak egiteko programa erabiltzen erakustegatik.

Tesia egiteko UPV/EHUk 2010/2011 ikasturtean lau urtetarako emandako ikertzaileen prestakuntzarako laguntzari esker hasi ahal izan genuen (kodea: PIF10/2010/PIF10017), eskerrak, hortaz, erakunde hari ere.

Nola ez, Beléni *porque todas las conversaciones, discusiones y debates (incluso algunos enfados) que hemos tenido han servido para que tenga una visión más amplia de todo; porque me has enseñado el interesantisimo mundo de la filológia clásica, a la que mucho tiene que envidiar la vasca —en euskera no tenemos poetas como Arquíloco ni Mimnermo, mucho menos de esa época, pero lo que la filología clásica puede aportar a la vasca no tiene precio—; porque has sabido soportarme y elevarme en los momentos más bajos en todo este camino. Por todo.* Eta, Óliver, zuri, egunero ateratzen didazun irribarreagatik, ematen dizkidazun besarkadengatik eta urte hauetan erakutsi didazun guzti-guztiagatik. Eskerrik asko zuei bioi emandako maitasunagatik. Eta barkamenak ere eskatu behar dizkizuet pazientzia izan duzuelako lan hau egiteko denbora zuekin egotetik kendu dudalako.

Orain liburu bezala ateratzen den hau 2017ko uztailaren 19an Arabako Campuseko Micaela Portilla eraikinean defendatutako tesiaren bertsio berritu eta osatua da; ordukoan ez zeuden testu labur batzuk gehitu dira, iruzkin eta azterketa batzuk hobetu eta hiztegia osatu. Hori dela eta, biziki eskertu behar ditut epaimahaikide izan-

dakoak: Céline Mounole, Iñaki Camino eta Patxi Salaberri Zaratiegi. Dudarik gabe, lana hobetu da beren oharrei esker; edonola ere, lanean dauden hutsen ardura nirea baino ez da. Azkenik, tesi zena liburu moduan atera dadin saiatu diren Joseba Lakarra eta Iñaki Camino ere biziki eskertu behar ditut.

Ziur nago bidean eskertu beharko nukeen pertsona bat baino gehiago ahaztu dudala. Inoiz nire lanagatik interesa erakutsi duen horri, gaiagatik interesez galdetu didan horri, eskerrik asko.

# I
# SARRERA

Esku artean daukagun ikerketa honen egiteko nagusia da goi-nafarrera arkaiko (1415-1600) eta zaharreko (1600-1750) testuak argitaratu eta haien azterketa linguistiko eta dialektologikoa egitea. Hori dela eta, lanarekin hasi aurretik, beharrezkoa iruditzen zaigu erabili dugun metodologia zein izan den eta gure lanaren oinarriak eta irizpideak zein izan diren azaltzea. Hori berori da lehendabiziko atal honen asmoa. Lehenik, gaiaren aurkezpen eta helburuak (§ 1.1) aurkeztuko ditugu; ondoren, baliatu dugun metodologia azalduko dugu; bertan, dialektologia historikoaz (§ 1.2.1) eta filologiaz (§ 1.2.2) mintzatuko gara. Aipatu bi adar hauetan beharrezko diren testuez eta hauen fidagarritasun mailaz (§ 1.3) bi hitz esango ditugu jarraian. Halaber, goi-nafarrerari buruzko ikerketen aurrekariez (§ 1.4) eta goi-nafarrera arkaiko eta zaharra ikertzeko beharraz (§ 1.5) arituko gara. Hori esanda, gure ikerlana gauzatzeko finkatu ditugun muga edo zedarri geografiko eta kronologikoak aurkeztuko ditugu (§ 1.6). Amaitzeko, bi hitz esango ditugu goi-nafarrera arkaiko eta zaharreko corpusaren izaeraz (§ 1.7.1) eta tradizio idatziaz (§ 1.7.2).

## 1.1. AURKEZPENA ETA HELBURUAK

Maiz hizkuntzalaritzak, areago historikoa bada, filologiarekin estuki loturik egon behar du, batez ere garai zaharragoetako hizkuntza egoera edo honek izandako bilakaera aztertu nahi badugu. Filologiak ematen ditu hizkuntzalaritzak behar dituen datuak eta, beraz, garai zaharragoetako hizkuntza aztertzeko nahiz egungoak dituen ezaugarriak ulertzeko, ezinbestekoa da testu zaharrak behar bezala editaturik eta interpretaturik izatea eta ikerlarientzat eskuragarri egotea.

Meilletek (1925: 25) iradokitako ideiari, hots, ahaiderik ez duen hizkuntzak historiarik ez duela dioen ideia hari Mitxelenak (1963: 12; ik., halaber, Lakarra 1997) eman zion erantzuna. Bistan da, luzeagoa edo laburragoa izan, euskarak historia, protohistoria eta historiaurrea badituela. Hizkuntzalariaren lana da garai bakoitza ahalik eta ondoen ezagutzeko beharrezko azterketak egitea, baina filologoaren lana da azterketa horretarako oinarri izango diren datuak eskuragarri uztea.

Euskal hizkuntzalaritza eta filologiaren eremuan nahi genukeen egoeratik aski urrun gara, eta oraindik edizio onik ez duten testu ezagun asko dago, eta ditugun edizio asko zaharrak dira eta berritu beharrean daude.

Jakina, gure lan honek ez ditu behar guztiak aseko, baina euskal hizkuntzalaritza eta dialektologia diakronikoari bere ekarpena egin nahi dio, baita bi alor hauekin estuki loturik dagoen euskal filologiari ere.

Ezagun denez, inguruan dituen hizkuntzen aldean, euskara aski berandura arte ez da idatzirako erabili; laburra du, beraz, historia. Hori hala izanik ere, hizkuntzaren iragana aztertzea eta euskarazko testu zaharrak begiratzea ezin utzizko lana dugu, bai hizkuntzaren beraren bilakabidea ezagutu ahal izateko, bai ondoren protohistoria eta historiaurrea ezagutzeko.

Askotan esan izan denez, gure hizkuntzan idatzitako lehen testu luzeak xv-xvi. mendeetan agertzen direnerako, euskara dialektotan banaturik dago. Dialektook eta, beraz, dialekto horietan idatzitako testuak sakonki aztertzeak eta elkarren artean konparatzeak hizkuntzaren historia eta nondik norakoa hobeki ezagutzen lagun diezaguke.

Lan honetan, funtsean, euskararen dialekto bat izan dugu kontuan —gainerakoak atzendu gabe, noski—, goi-nafarrera alegia; eta bere garai lekukotu zaharrena izan dugu aztergai. Hortaz, goi-nafarrera arkaiko eta zaharraz jardun dugu esku artean dugun ikerlanean (§ 1.6 atalean eman ditugu dialektoaren zedarri geografiko eta kronologikoak).

Oro har, euskara arkaikoa ikertuxeago badago ere, euskara zaharra, Lakarrak (1997: 516) emandako definizioaren arabera, gutxiago aztertutako eremua da. Badira euskara arkaiko eta zaharreko zenbait alderdi ikergai dituzten lanak, besteak beste, aditz perifrastikoen eboluzioa azaltzen duten Mounoleren lanak (2006, 2007) eta tesia (2011; ik., orain, 2014), artikuluaren nondik norakoak erakusten dituzten Manterolaren ikerketak eta tesia (2006, 2008, 2015) eta aditz-izenen eta horien atzizkien bilakabidea erakusten duen Urgellen (2006a) lana. Zenbatzaileen sorreraz eta bilakabideaz lan interesgarriak egin ditu Martinez Aretak (2009a, 2009b). Alor horietan eta beste zenbaitetan azken urteetan egindako lanak Martinez Aretak (2013a) bildu ditu. Euskararen egoera zaharragoaz, Erdi Aroko euskara aztertzen duen master amaierako lana aurkeztu genuen (Reguero 2012a); eta horren fruitu dira zenbait artikulu (Reguero 2011b, 2012b, 2012c eta 2013b). Berrikiago, Ariztimuñok (2016) lan interesgarri bat argitaratu du, zeinetan, aitagure zaharren ezaugarrien konparaketa sistematikoa eginik, euskararen dialekto zaharren irudia eskaintzen duen.

Denbora ardatz duten lanak, zorionez, ugaritzen ari badira ere, dialektoen garai zaharrenak aztertzen dituzten ikerketak urriak dira, ez horratik eskasak: Arabako euskara galduaren berri eman zigun Mitxelenak (1958a); Lakarrak (1986, 1996) bizkaiera zaharra aztertu zuen; berriki, Koldo Ulibarrik (2015) Arabako Aiara aldeko testu orain arte ezezagunetan oinarrituz, egun galdurik dagoen hizkeraren azterketa diakroniko zehatz eta sakona aurkeztu digu bere doktorego tesian. Bide beretik, Eneko Zuloaga (prestatzen) ipar-mendebaldeko bizkaieraren azterketa diakronikoa gauzatzen ari da tesian. Halaber, Manu Padillak (2017) bere tesian ekialdeko euskara, bereziki Zuberoakoa, aztertu du. Duela urte gutxi, Caminok (2008a) lan bikain batekin ekin zion Nafarroa Behereko euskara zaharra ikertzeari; xvi-xix. mendeetako testuak aztertu eta mendez mende aldaketa nolakoa izan den erakutsi du euskal hizkuntzalaritza eta dialektologia diakronikoan funtsezko eta oinarrizko bilakatu den lanean. Bide beretik, ekialdeko mintzoak aztertu ditu kronologia ardatz harturik (Camino 2011a eta 2011b). Era berean, goi-nafarrera eta lapurteraren konparaketa diakronikoa egin du berrikiago (Camino 2013a). Bestalde, Mounole & Lakarrak (2018) eta Mounole & Gómezek (2018) euskara arkaikoaren eta zaharraren eta klasikoaren ikuspegi zabalagoa aurkeztu dute, hurrenez hurren. Aipatu lanean, orduko euskararen egoera soziolinguistikoa erakutsi ondoren, garaiko testu eta argitalpenak

zerrendatu eta bertako euskararen azterketa sistematikoa egin dute grafian, fonologian, morfologian, sintaxian eta lexikoan oinarrituta.

Dena dela, hizkuntza ezaugarrien azterketa diakronikoaz gain, goi-nafarrerazko testuen edizio kritikoak ere badakartzagu gure lan honetan. Azken hamarkadan, euskal filologiaren loraldi bat dagoela dirudi, eta testu zaharren edizio bikainak argitaratzen ari dira. Urruti gabe, Lazarragaren lanaren edizio kritiko paregabea dugu eskura (Bilbao *et alii* 2010). Manu Padillak (2011) *Kadet eta Bettiriño* obraren edizioa paratu du eta Caminok (2013b) Lopezen 1782ko itzulpenaren edizio eta azterketa eskaini dizkigu. Berrikiago, Aziti Bihia hizkuntzalari eta filologoen elkarteko kideok Materreren dotrinaren 1617ko eta 1623ko argitalpenen edizio kritikoa osatu dugu (Krajewska *et alii* 2017). Urte luzeetako esperoaren ondotik, Urgellek paratutako Axularren *Gero*ren edizio bikaina ere kalean da (Urgell 2015a). Euskal dialektologia historikoaren eta filologiaren goraldi horretan kokatu nahiko genuke gure lana.

Dagoeneko iradoki dugun moduan, lan honetan aurkezten dugun lanak helburu argi eta zehatzak ditu; honatx laburbildurik zein diren lan honek amaieran ase nahiko lituzkeen beharrak:

a) xv. mendean hasi eta xviii. mendearen erdialdera bitarteko goi-nafarrerazko testu —luze zein labur— ezagun guztien edizio filologikoak egitea. Beraz, corpusetik kanpo utzi ditugu Erdi Aroan Aymeric Picaudek egindako hiztegitxoa (*TAV* § 2.2.12), Nafarroako Foruan agertzen diren egiturak eta esaldi laburrak (*TAV* § 2.2.13) eta Erdi Aroko gainerako lekukotasun nafarrak. Horrezaz gain, testu bakoitzaren hizkuntzaren iruzkina egin dugu, beraietan islatzen diren hizkerak sakontasun handiagoz ezagutzeko (§ 2).
b) Testu bakoitzaren edizioa eta iruzkina paratu ondotik, bertan aztertu ditugun ezaugarri nagusiak kontuan hartuta, dialektoaren bilakaera aztertzea. Nagusiki, fonologia, izen eta aditz morfologia, sintaxia eta lexikoa aztertu ditugu. Hortaz, goi-nafarrera arkaiko eta zaharraren hizkuntz ezaugarriak sistematikoki aztertzea ere bada helburua (§ 3).
c) Hirugarren helburu bat ere badu lan honek: goi-nafarreraren sailkapenaz eta periodizazioaz proposamen berria egitea. Uste dugu euskararen dialekto historikoen azterketa diakronikoa egiteak argi eman diezaiokeela euskararen historiaren eta dialektalizazioaren ezagutzari (§ 4).

Bosgarren kapituluan laburbildu ditugu aurrekoetan atera ditugu ondorio nagusiak (§ 5).

## 1.2. METODOLOGIAK: DIALEKTOLOGIA HISTORIKOA ETA FILOLOGIA UZTARTUZ

Edozein hizkuntzatako filologia eta hizkuntzalaritza lanen antzera, euskararen edo honen dialektoen historia aztertzeko beharrezkoa da metodologia bat hautatu eta horri zuhurki jarraitzea:

> En otras palabras, la historia de nuestra lengua, como la de cualquier otra, es ante todo una historia, que se hace con métodos históricos, que sólo sufren modificaciones accidentales por la naturaleza específica del objeto histórico estudiado. (Mitxelena 1964c: 253)

Hizkuntzaren historia ezagutzeko zimenduak hizkuntzalaritza historikoak jarri zituen XIX. mendearen erdialdean, eta geroztik ez da oraino beste eredurik garatu hori ordezka lezakeenik. Bestalde, Ponsek (2006: 10) azaltzen duenez, hizkuntzaren historia testuen historia linguistikoa da; hortaz, iturrira jotzeak eta testuaren eta ikertzailearen bitartekari gutxi izateak garrantzia handia du. Hemendik aise da ondorioztatzea hizkuntzalaritza historikoa filologiarekin uztartzeko beharra.

Hori dela eta, gure lan honetan ezin bereizi izan ditugu hizkuntzalaritza edo dialektologia historikoa (§ 1.2.1) eta filologia (§ 1.2.2), eta ondoko lerroetan erabili dugun metodologia azalduko dugu. Aurretik, ordea, gure egiten ditugu hizkuntzalaritza historikoan maisu den Campbellek esandako hitzak (2004: 362):

> In the use of philology for historical linguistics purposes, we are concerned with what linguistic information can be obtained from written documents, with how we can get it, and with what we can make of the information once we have it. The philological investigation of older written attestations can contribute in several ways, for example, by documenting sound changes, distinguishing inherited from borrowed material, dating changes and borrowings, and helping to understand the development and change in writing systems and orthographic conventions. Results of these studies can have implications for claims about scribal practice, subgrouping classification, causes of changes, the reconstruction of a proto-language, borrowed changes and rules, the identification of extinct languages, and for the historical interpretation of many changes within the languages investigated in this way.

### 1.2.1. Dialektologia historikoa

Hizkuntzalaritza historikoarekin estuki loturik dagoen dialektologia historikoa baliatu dugu goi-nafarrera arkaiko eta zaharra aztertzeko. Pilchen (1988: 418) arabera, dialektologia tradizionalaren foku nagusia hizkuntza baten aldakortasun geografikoa aztertzea izan da; aldiz, hizkuntzalaritza historikoarena, hizkuntzak denboran izandako aldaketari begiratzea. Beraz, dialektologia historikoaren egiteko nagusia denboran eta espazioan dialektoek izan dituzten aldaketak aztertzea da.

Berriki, Pilchen arestiko eredu horri jarraituz, Ulibarrik (2013: 514) dialektologia historikoa gramatika historikoaren parte dela azaldu eta helburu hauek finkatu ditu:

> Helburu nagusia dialekto muga zaharrak aztertzean eta marraztean datza, eta muga horiek osatzen dituzten isoglosek pairaturiko aldaketak erakustean, gaur egungo dialektoetara (dialektologia tradizionalak edo geolinguistikak aztertzen dituen horietara) nola heldu garen argituz. Aldi berean, azterbide honek linguistika historikoa ere aberasten du, honen aztergai diren hizkuntz aldaketak hizkeretan zehar nola zabaldu diren erakusten baitu.

Inoiz uste eta pentsatu izan denaren aurka, euskararen dialekto historikoak ez dira hertsi eta estatikoak, ezta betierekoak ere; edozein hizkuntzaren dialektoak bezala, etengabeko aldaketan daude. Lehen lekukotasunak agertuz geroztik ikus dezakegunez, menderik mende aldatuz joan dira euskalkiak. Eta hori hala izan da Euskara Batu Zaharra[1] bereizten hasi zenez geroztik gutxienez. Damurik, lehen lekukotasu-

[1] Hemendik aurrera EBZ; hori aipatzean Mitxelenak (1981) proposatutako *éuskaroaz* dihardugu; alegia dialekto historikoetan bereizi aurretik euskarak zukeen egoera batu(ago)az.

nak EBZren lehen banaketa izan eta hainbat mende beranduagokoak dira, dagoeneko dialektoak aski bereizirik dauden garai batekoak.[2] Ideia horri jarraikiz, lanari ekiteko oinarriak ongi finkatu ditu Caminok (2008b; cf., halaber, 2013a), beti ere denbora ardatz hartuta. Berrikiago, Lakarrak (2011)[3] ere euskararen dialektalizazioa ulertzeko oinarrizko irizpideak finkatu ditu.

Dialektoaren bilakabidea aztertzean, burutan izan behar dugun helburua, sailkapen hutsetik haratago, aitzin-hizkuntzatik egundainoko dialektoaren historia eta dialekto horrek gainerakoekin izan duen harremana aztertzea da. Zuazok (1998a eta ondoko lanetan) euskalkien sailkapena egiteko «berrikuntzak —edo berrikuntza izan daitezkeenak—» bakarrik hartu ditu kontuan (1998a: 192). Areago, berrikuntzok hiru baldintza bete behar dituzte Zuazoren arabera: hedadura zabalekoak izatea, emankorrak izatea eta gaur egungo euskaran bizirik egotea. Hori dela era, erabat baztertzen ditu arkaismoak (*ibid.*). Zuazoren irizpideak egungo euskalkien sailkapen sinkronikoa egiteko balio balezake ere, nekez erabil dezakegu irizpide bera dialektoen bilakabidea eta historia ezagutzeko. Horretarako, ezinbestean, arkaismoak eta berrikuntzak bereiztea eta, are, kontuan izatea beharrezkoa da (cf. Camino 2009: 388 eta hh.).

Arkaismoez den bezainbatez, dialektoak aitzin-hizkuntzatik mantendu dituen ezaugarriak dira, eta geografikoki elkar ukitzen ez duten eskualdeek parteka ditzakete. Aitzin-hizkuntzatik datorren ezaugarri batek dialekto batean iraun badu, eta bestean galdu edo berritu, iraun duen ezaugarria da arkaismoa (ik., besteak beste, Camino 2009: 410).

Dena dela, arkaismo guztiek ez bide dute pisu bera. Watkinsek (1966: 30) dioenez, dialekto edo hizkuntza batek arkaismo bat emankor mantendu badu gainerakoen aldaketaren aurka, lehen mailako datu dialektal baten aurrean egon gaitezke (ik. halaber Petit 2007: 27 eta Lakarra 2011: 175). XVI. mendeko Nafarroa Behereko Etxepareren hizkeran eta Bizkai mendebaldeko *Refranes y Sentencias*-en aoristoa agertzeak eta erdialdeko goi-nafarrerak halakorik ez izateak ez du Bizkaiko eta Nafarroa Behereko hizkeren inolako batasunik erakusten; beharbada, interesgarriago izan liteke goi-nafarrerak gordetzen dituen hitz hasierako ahostunak kontuan izatea, ez bakarrik *bake* eta *barkatu* adibideetan, baita *biztu*, *butzu*, *baradizu*, *gaztigu* eta gisakoetan ere. Gainera, *gonbersazio* moduko mailegu berriagoek erakuts lezakete hitz hasierako ahostunek luzaroago iraun duketela goi-nafarreraz. Edonola ere, Petitek (2007: 28) muga hertsia jartzen dio Watkinsen hatsarre hari:

> Le principe de Watkins n'a donc de validité que dans de cas très limités: ce n'est que là où la majorité des langues a réalisé une innovation négative (perte de *x*) qu'on peut considérer un archaïsme positif (conservation de *x*) comme un trait dialectal pertinent. Il prend donc en compte un facteur quantitatif, dès lors qu'ill amène à opposer une minorité et une majorité de langues: ce qui est significatif d'une appartance dialectale, ce sont uniquement les archaïsmes minoritaires.

---

[2] Dena dela, gogora dezagun Mitxelenak (1981) erakutsitakoa, alegia, denboran zenbat eta atzerago joan, orduan eta desberdintasun gutxiago dagoela euskalkien artean.

[3] Argitalpen urtea 2011 bada ere, 2014an ikusi zuen argia liburuak. Hemendik aurrera artikulua dakarren liburuak duen argitalpen urtea erabiliko dugu, hau da, 2011.

Berrikuntzez den bezainbatez, dialektologia historikoan aitzin-hizkuntzaren adarkatzea nola izan zen ezagutzeko, arkaismoak baino lagungarriago dira horiek, batez ere partekatuak badira. Berrikuntzak aitzin-hizkuntzak ez, baina dialektoak badituen ezaugarriak lirateke. Horien artean, Petitek (2007: 22; ik., halaber, Lakarra 2011: 173) iradokitakoaren ildotik, hiru motatakoak bereiz genitzake:

— Berrikuntza negatiboak: ezaugarri bat galtzea. Mota honetakoa litzateke, demagun, Hego Euskal Herriko hizkeretan hasperena galtzea. Ustez, Euskara Batu Zaharrak bazuen hasperena, baina denboraren poderioz hots hori galdu dute dialekto batzuek.
— Berrikuntza positiboak: ezaugarri berri bat sortzea. Halakoa litzateke, beharbada, *ene* posesiboa baztertzea *nire* analogikoaren alde.
— Eraldaketa: ezaugarria aldatzea. Alegia, funtzio jakina duen ezaugarri batek beste funtzio bat hartu eta aurrekoa galtzea.

Dena dela, hiru berrikuntza mota horien balio frogatzailea ez da bera:

> La perte d'une forme ou d'une catégorie est en effet faiblement discriminante, car elle participe d'une séletion où seules deux options sont posibles: perte ou conservation. La part du hasard, c'est-à-dire la chance d'un développement indépendant, s'y trouve dans un rapport d'un sur deux, ce qui est considérable. En revanche, la crèation ou la transformation d'une forme ou d'une catégorie est nettement discriminante, car elle ne se résume pas à une sélection entre deux possibilités (création ou non-creation), mais entre une multitude de possibilités, dès lors qu'elle fait intervenir le choix d'un materiel linguistique spécifique. La part de l'aléatoire y est beaucoup plus faible. (Petit 2007: 23)

Laburbilduz, berrikuntza positiboek eta eraldaketek dute pisu gehien dialektoaren bilakabidea ulertu eta gainerakoekin duen harremana ezagutzeko.

Berrikuntza positiboen artean, partekatuak izan ohi dira dialektoak taldekatzeko kontuan hartzen direnak. Horretarako onartu behar da azpitalde berean sartzen diren dialektoek inoiz batasun bat osatu dutela. Bestalde, berrikuntza paraleloak ere badaude; esaterako, Bizkaiko mendebaldeko hizkeretan eta Nafarroako hegoaldekoetan iraganeko *-n* galtzea ez bide da berrikuntza partekatua, berrikuntza paraleloa baizik; alegia, bakoitzak bere kabuz egindako berrikuntza. Horrek, bistan da, ez du balio dialektoak elkarrekin lotu eta azpitaldeak osatzeko.

Halaber, genetikoki dialektoaren ondarean diren ezaugarriez gain, kontuan hartu behar dira difusioz hedatuak izan litezkeen ezaugarriak ere. Alegia, zenbait ezaugarri eremu batean sortu eta foku horretatik inguruko eskualdeetara hedatzen dira (Petit 2007: 29). Ezaugarri berri horien hedadura azpitalde genetikoez haratago doa, eta beste azpitaldeetara heda daitezke; mugaz gaindiko berrikuntzak dira (Petit 2007: 33). Hedadura horretan, berrikuntzak progresiboki ahulduz joaten dira fokutik zenbat eta urrutiago egon; hori dela eta, tarteko egoera dialektalak sortzen dira berrikuntza erabat gertatu den eremuaren eta gertatu ez den eremuaren artean. Gisa horretako ezaugarriak begiraturik, Hockek (1991: 440; cf. Petit 2007:36) hiru gune bereizten ditu: foku gunea, non berrikuntza sortu den eta, hots aldaketa bada, erregularki garatzen den; hondar gunea,[4] non ez den berrikuntza hori iritsi; azkenik, bien arten tran-

[4] Ingelesezko *relic area* eta frantsesezko *aire residuel* deitu dugu *hondar gunea*.

tsizio gunea dago, non berrikuntza iraungitzen den. Hockek (1991: 440) iradokitzen duenez, foku gunea geografikoki eta soziolinguistikoki erdigunean egon ohi da; aldiz, hondar gunea ertzean egoten da. Nolanahi ere, Petitek (2007: 36-37) azaldu bezala, teoria hori aitzin-hizkuntza edo aitzin-dialektoa berreraikitzeko interesgarria bada ere, kontu handiz erabiltzekoa da; batez ere, lekukotasunek egoera dialektala islatzen dutelako, hizkuntza komunaren ondoko egoera, alegia.

> Pour les langues anciennes de la famille indo-européenne et pour la reconstruction de la proto-langue, l'exploitation de cette théorie se révèle intéressante, mais parfois délicate. On en est souvent réduit, par la nature même de la documentation, à se fonder uniquement sur des langues communes, déjà cristallisées à travers une sélection de faits dialectaux, et à ne plus pourvoir que soupçonner imparfaitement la complexité des faisceaux d'isoglosses. (Petit 2007: 36-37)

Eredu genealogikoaren eta eredu geografikoaren artean egon litezkeen kontraesanak gainditzen dira ikuspuntu diakronikoa baliatzen badugu. Faktore historikoek isoglosetan nola eragin duten azterturik lehenagoko garaien egoera ezagut daiteke. Hemendik abiatuz, Meid-ek «denbora/espazio eredua» garatu zuen (*apud* Petit 2007: 41). Meidek indoeuroperarako garatu zuen ereduak bestelako hizkuntzetarako ere balio lezake, eta ondokoa du hatsarri: indoeuropera, edo, demagun, gure kasuan Euskara Batu Zaharra, benetan hitz egin zen hizkuntza bat da eta, beraz, ez da homogeneoa; denboran eta espazioan aldatzen den zerbait da, heterogeneoa da aitzin-hizkuntza. Hori dela eta, aitzin-hizkuntzak edo hizkuntza komunak hiru motako ezaugarri linguistikoak lituzke: norma, arkaismoa eta berrikuntza. Hori horrela, hizkuntza komunetik sortutako dialektoek dituzten ezberdintasunak hiru motako ezaugarri horien konbinazioaren araberakoak lirateke. Ondorioz, Meidek hizkuntzen ezaugarriak ikuspuntu kronologikotik aztertzea proposatzen du; eta iradokitzen du aitzin-hizkuntzatik datozen hizkuntzak garai ezberdinetan bereizi zirela eta hizkuntzen edo dialektoen zatikatzea beti bitarra dela (ik. Petit 2007: 41-50; Lakarra 2011: 175-177).

Dialektologiako lan diakronikoa egitean, berrikuntzez eta arkaismoez gain hautuak ere hartu ohi dira kontuan. Halere, hautuak halakotzat hartzea hizkuntzalariaren erabakia izan ohi da askotan, batzuetan zaila baita jakiten berrikuntza ala arkaismoa den (cf. Camino 2009: 404; Ulibarri 2015: 40-41). Gerta liteke dialekto edo hizkera batek esanahi bera duten bi forma edukitzea; segur aski, bi formak ez dira garai berean sortu, eta bata bestea baino berriagoa izan liteke. Zein den zein baino zaharragoa jakiten ez da beti erraza, ordea. Gure lanean ahalegindu gara hautútzat hartu izan diren ezaugarriak berrikuntzak edo arkaismoak diren zehazten; horrela, goi-nafarrerak dituen **eradun* eta *-i(n)-* aditz laguntzaileak hautútzat hartu beharrean, erakusten saiatu gara **eradun* dela arkaismoa eta *-i(n)-* erroa berrikuntza (§ 3.2.2.2.4).

Laburbilduz, ezaugarrien kronologia finkatzeak —noiz agertzen diren edo noiz galtzen diren zehazteak— lagun gaitzake dialektoek nolako bilakabidea izan duten ikusten.

Halaber, aintzat hartu beharreko beste alderdi garrantzizko bat espazioa bera da. Hizkera, hizkuntza edo dialektoa espazio zehatz batean hitz egiten da, eta denborak aurrera egin ahala murriztu edo heda daiteke. Ondorioz, aztergai dugun mintzoak beste eremuekin dituen loturak begiratu eta aztertzea ere ez da baztertzeko lana; horrek erakutsiko digu ikertzen ari garen dialektoak zein lotura izan duen inguruko bes-

teekin, noiztik eta noiz arte. Hori dela eta, gure lan eremua goi-nafarrera arkaiko eta zaharra badira ere, ez ditugu alde batera utziko orduko albo-dialektoetako ezaugarriak; alegia, Arabako, Gipuzkoako, Lapurdiko, Zaraitzuko, Erronkaribarko eta Nafarroa Behereko euskara arkaiko eta zaharrek dituzten ezaugarriak ere begiratzekoak eta kontuan hartzekoak dira.

Dialektoak hiztun komunitateen hizkerak direnez, eta hauek alde bateko zein besteko hiztun komunitateekin harremanean daudenez, elkarreraginak saihestezinak dira. Dialektoek, beraz, inguruko gainerako dialektoen eragina jaso dezakete denboran zehar, eta hori kontuan hartu behar da eremu bateko hizkera edo dialektoa aztertzen dugunean. Ondorioz, hizkeren eta dialektoen bilakabidea azaltzeko, inguruko hizkera eta dialektoekiko konbergentzia eta dibergentzia maila ere neurtu behar da:

> Dialektologialariak jakin nahi izaten du aztertzen dihardUen mintzo bat, azpidialekto bat edo dialekto bat, ondoko eta urrunagoko beste mintzo edo dialektoekin nola erlazionatzen den, zein harreman-egituraren barrenean kokaturik dagoen; hizkuntza-aldakiak espazioan zein mekanismo eta erregulartasunen arabera kokatzen diren; hartara, hainbat galdera egin behar izaten dio bere buruari:
>
> a) dialekto baten ezaugarri espezifikoak aintzat harturik dialektologialariak x dialekto hori definitzen duenean
> eta
> b) x dialekto horren inguruan erabaki areal bat harturik sailkapen dialektal jakin bat proposatzen duenean
>
> dialektologialariak berdin jokatu behar ote du, hau da, lantegi batean eta bestean hizkuntza-ezaugarri berberak aintzat hartu behar ote ditu? (Camino 2009: 319-320).

Gainera, euskararen kasuan inguruko beste hizkuntzen eragina ere ezin atzendu daiteke. Ezagun denez, erromantzeen pisua (gaztelania, nafar erromantzea eta okzitaniera) nabarmena izan da Nafarroako historian. Beraz, goi-nafarrerak duen eta historian eduki duen kokapen geografiko eta linguistiko horrek, ezbairik gabe, bere marka utzi du.

Hortaz, denbora eta espazioa ezin bereiz bide daitezke dialektoa aztertzen dihardugunean.

Gure lan honetan, dialektologo diakronistaren begietatik begiratu diegu testuei eta horietan agertzen diren ezaugarriei. Arestian esan dugunez, euskarazko lehen lekukotasun luzeak agertzen direnerako, euskara zenbait dialektotan ongi bereizirik ageri da. Horixe da goi-nafarrerarekin gertatzen dena. Ordurako, esan liteke goi-nafarrera badela, baina ez bide daude gaur halakotzat hartzeko balio lezaketen ezaugarri esklusibo guztiak (ik. aurrerago § 3). Bat gatoz Caminorekin (1998a: 112) esaten duenean dialektologiaren funtsezko ikerbidea hizkeren ezaugarrien deskribapena oinarritzat (ezen ez helburutzat) harturik kokapenaz, sailkapenaz eta beste hizkerekiko alderaketaz jardutea dela.

Lan honetan egiten dugun dialektologia Mitxelenak (1976a: 200) «dialectología “antigua”» izendatu zuena da; hau da, dialekto baten garai zaharragoez aritu gara, ez egungo hiztunek darabiltenaz. Esan nahi baita, testu zaharrek islatzen duten hizkera izan dugu aztergai eta haietatik aterako dugu mamia. Bestalde, iturrien egoera dela eta, ikuspegi makroskopikoa izan dugu, dokumentu kopuru mugatua izanik, muga hertsiak baititu azterketak (Mitxelena 1976a: 201).

Meilletek (1925 [2001]: 104) esan zuen, antzinako hizkuntzak aztertzeko orduan, hizkuntzalariak filologiarik zorrotzenaz baliatu behar duela, eta filologiaren metodorik zorrotzenek eskaintzen dioten zehaztasun eta zorroztasun guztiaren beharra duela. Bide beretik jotzen du Mitxelenak (1976a: 200) ere: askotan testu idatziak zatikakoak edo gaizki kontserbaturikoak dira; hori dela eta, kontu handiko interpretazio filologikoa baliatu behar da.

### 1.2.2. Filologia

Lakarrak (1997: 448) gurea baino aurreratuago dauden tradizioetatik aterata eman zuen ikasgaietarik bat da ezen,

> [h]izkuntzaren historia aztertu gogo duen ikertzaileak, esan gabe doa, bere gaitasunaz landa, bi eratako aurrebaldintzak kontuan izan beharko dituela, nahi eta nahiez biek izango baitute eraginik bere ondorioen emankortasunean:
>
> 1. corpusaren aberastasuna (antzinatasuna eta ñabartasuna, nahiz dialekto, nahiz hizkuntz maila, nahiz literatur moten aldetik); eta
> 2. corpus horren ezagutza.

Oro har, iraganean hizkuntzak izan dituen aldaketen interpretazio egokia egiteko, ikertzaileak eskura izan behar ditu testu idatzi zaharrak (Rodríguez Molina 2006: 19). Hori horrela izanik, goi-nafarreraren historia aztertu nahi badugu, beharrezkoa zaigu dialekto horretan idatzi diren testu zaharrak eskura izatea eta horiek sakon ezagutzea; besteak beste, jakin behar dugu zein testu mota diren eta egileak nor diren, baina baita testuetako hizkerek zein ezaugarri dituzten, zein ezaugarri agertzen den noiztik aurrera edo noiz arte.

Hori dela eta, gure lanak bi ardatz ditu: batetik, arestian aipatutako hizkuntzalaritza historikoak eta, bereziki, dialektologia historikoak markatutako bideari jarraitu diogu; bestetik, hizkuntzaren historian sakontzeko eta berau ezagutzeko testuak eta, beraz, filologia izan ditugu oinarri. Horregatik, gure egiten ditugu, beste behin, Lakarraren ondoko hitzok:

> Corpusaren gehiketari horren ezagutza sakona ere lotu behar zaio hizkuntzaren historia aitzinatuko bada. […] hizkuntzaren historian ikerketak bietariko lanabes eta indarrak konbinatu beharra du; filologiaren aldetik iraganeko hizkuntzarentzako «belarria» testu ugariren irakurketan eta esamoldeen ñabardurarik tipienen ezagutzan oinarritutako testuen ikerketarako historiazko eta kulturazko jakintza. (1997: 449)

Bistan denez, dialekto baten bilakabidea aztertzeko testu zaharrenetarik abiatu behar da, horiek eramango baikaituzte hizkuntzaren egoera lekukotu zaharreneko garaira. Hori hala izanik, lan honetan garai zaharrenetara mugatu gara testuak aukeratzeko orduan. Lakarrak (1997) eta ondoren Gorrochateguik eta Lakarrak (2001) egindako periodizazio saioan finkatutako euskara arkaiko eta zaharra izan ditugu aztergai; hots, funtsean 1745 arteko goi-nafarrera. Horretarako, ezagutzen ditugun orduko testu guztiak bildu eta horien edizio berriak aurkeztu ditugu.

Filologiak definizio ugari izan ditzake eta izan ditu; esate baterako, Blecuak (1983: 10) filologiaren helburutzat dakartza «nazio» bakoitzaren kultura eta sistema

linguistikoa berreraikitzea eta autorearen jatorrizko hitzak mantentzea. Ulibarrik (2015: 28) bere tesian honela laburbiltzen du filologiaren helburu nagusia:

> Filologiaren helburu nagusia da testuaren hizkuntz garaiari, lekuari, egileari, testuaren helburuari, testua egiteko egileak erabilitako lan moldeari, eta abarrei buruzko datu guztiak biltzea, testuaren fidagarritasuna bermatzeko. Lan egiteko oinarri eta koroa testukritika litzateke (Orduna 2000: 3); hots, testu baten edizio kritikoa egiteko beharrezko metodologia lantzea.

Ulibarrik emandako ikuspuntu hori ez zaio kontrajartzen lehenago Pérez Priegok eman zuenari:

> Desde la perspectiva científica que en rigor postula la investigación literaria, resulta imprescindible y necesariamente previa a cualquiera de sus planteamientos, la contribución de la filología, entendida ésta en su más estricto significado, esto es, como ciencia que se ocupa de la conservación, restauración y presentación editorial de los textos. (Pérez Priego 2011: 15)

Gure lan honetan filologiaren definizio hertsi horri lotu gatzaizkio bereziki. Hau da: garai eta eremu zehatz bateko testuen edizio filologikoak egin ditugu. Testu zaharrekin dihardugula, edizio on eta fidagarriak izatea ezinbestekoa da ondoren dagokigun dialektoaren historia ezagutu nahi bada; izan ere,

> La correcta interpretación de los cambios lingüísticos producidos en épocas pretéritas depende en no pequeña medida de cantidad y calidad de los materiales escritos al alcance de los investigadores. (Rodríguez Molina 2006: 19)

Hortaz, goi-nafarrera arkaiko eta zaharra ondo ezagutuko badugu, beharrezko zaigu irizpide filologiko zehatz batzuei jarraituz egindako edizioak eskura izatea. Esan dugunez, gure saio honetan aurkeztu ditugun edizioak egiteko, betiko filologiari jarraitu diogu; beraz, *recensio*-ari ekin diogu lehenik; cf., esaterako, Blecua (1983: 37-41) eta Pérez Priego (2011: 115-141). Horren lehen urratsa da *fontes criticae* deritzona, alegia lekukotasun guztiak bildu eta aztertzea (Blecua 1983: 36; Urgell 2013: 535). Hori dela eta, gure edizioa paratu aurretik testuak lokalizatu eta, are, eskuratu ditugu. Ondoren, lekukotasun horien gainean idatzitako bibliografia guztia eta dauden edizioak begiratu ditugu. Informazio hori baliagarri zaio bai editoreari berari eta baita edizioa irakur dezanari ere:

> El examen de las fuentes y de los testimonios —y, por descontado, el previo conocimiento de la paleografía, codicología y textología— servirán para determinar la constitución, fecha e historia de los testimonios. Son sumamente importantes las descripciones y transcripciones antiguas de manuscritos, porque posteriormente han podido sufrir alteraciones graves como pérdidas de hojas, adiciones facticias, reencuadernaciones y deterioros notables. Y, desde luego, el editor debe conocer las ediciones y estudios sobre la obra y, en particular, aquellos que afectan a la constitución del texto. (Blecua 1983: 37-38)

Beraz, testuen jatorrizko izkribuak lortzea izan da lehen pausoa, nahiz eta batzuetan faksimileak argitaratuak egon. Edonola ere, Pérez Priegok (2011: 116) aitortu bezala, bilaketaren emaitza ausazkoa eta lausoa izan daiteke. Maiz ezin da jakin zer aurkituko dugun, aurkituko badugu, eta zein egoeratan.

Gure aurretik beste filologoek edo ikertzaileek esanak hartu ditugu abiaburu; adibide gisa, Iruñean 1609an saritu ziren olerkiak jasotzen dituen liburuaren ale bakarra ezagutzen da (§ 2.2.14); baina, dirudienez, orain artean ez du inongo euskal filologok jatorrizkoa ikusi duenik aitortu. Vinsoni (1879) Francisco de Zabálburuk pasatu zizkion eskuz idatzirik euskarazko testuak. Mitxelenak (*TAV* § 3.1.20) Vinsonen edizioan oinarriturik eta zuzenketak proposaturik aurkeztu zuen berea, jatorrizkoa ikusi gabe. Kerejetaren (1991) eskuetan ere ez zen jatorrizko alerik izan; onartzen duenez, mikrofilma izan zuen eta berau hartu zuen oinarri edizioa paratzeko. Gure kasuan, jatorrizko alearen atzetik ibili gara. Vinsonez geroztik bagenekien ezagutzen den ale bakarra Madrilgo Francisco de Zabálburu bibliotekan gordetzen dela, eta bertan dagoela baieztatu ondoren, digitalizaturik bada ere, liburua osorik ikusteko aukera izan genuen liburutegira bertaratuta.

Dudarik gabe, iturrietara zuzenean jotzeak lehengo irakurketak hobetzea, hobestea edo baztertzea ahalbidetzen digu; eta kasurik hoberenetan, lehen ezagutzen ez ziren testuak aurkitzea ekar lezake. Hala gertatu zaigu Aresoko otoitz zaharrekin (§ 2.3.1). Satrustegik (1990a, 1990b eta 1991b) Aresoko elizako artxiboan zegoen liburu batean eskuz idatzitako xvi. mende bukaerako aitagurea, kredoa, abemaria eta salbea eman zituen ezagutzera; baina liburu bera eskutan izanda, hiru testu laburtxo gehiago aurkitu ditugu: aitagurearen beste aldaera bat, kredoaren beste aldaera osatugabe bat eta artikulu fedezkoen itzulpen bat. Era berean, Maiorak (2011) ezagutzera emandako esaldiez gain, horien jatorrizkoetara jotzean esaldi gutxi batzuk aurkitu ditugu prozesuetan. Bestalde, Satrustegik *Euskal testu zaharrak I* bilduman argitaratutako Muruzabalgo sermoiez landara, gehiago badira Euskaltzaindiak dituen paperen artean.

Horiezaz gain, Interneti eta liburutegi zein artxiboek beren edukiak digitalizatu eta sareratzeari esker, aurkikuntza interesgarririk egin daiteke; esate baterako, orain arte ezagutzen ez genuen Beriainen *Tratado de como se ha de oyr misa* liburuaren beste ale bat aurkitu dugu.[5] Gure garaikoak baino berriagoak izan arren, beste zenbait testu nafar ere aurkitu ditugu sarean; horren lekuko dira Goizuetako 1753ko sermoia (Reguero 2015b) eta xviii. mendeko dotrina anonimo luze bat (Reguero prestatzen-1). Aipatu testuok xviii. mendearen bigarren erdikoak diren arren, hortik ez da segitzen interes askoz gutxiagokoak direla.

Hizkuntzaren iragana ezagutzeko hizkuntzalariak duen lehen mailako iturria da testu idatzia, eta funtsean filologoak dituen lekukotasun horiek eskuizkribuak edo testu inprimatuak izan daitezke. Eskuizkribuen artean *zirriborroak*, *originalak* eta *kopia autografoak* bereizi ohi dira; gainera, badira egileak idatzi ez dituen *kopia apografoak* ere (Blecua 1983: 39). Eskuizkribuek zein inprimatuek, bakoitzak bere aldetik, berezitasun, interes, zailtasun eta trabak dituzte. Bestalde, testuak lekukotasun bakarrekoak izan daitezke, edo bi edo gehiagokoak. Horrek, jakina, ondoko lanean badu zer esanik, lekukotasun bat baino gehiagoko testuek aukera ematen baitute elkarrekin erkatzeko, hutsak ziurtasun handiagoz identifikatzeko eta abar.

---

[5] Egiari zor, Ricardo Gómezek aurkitu zuen sarean. Austriako Österreichische Nationalbibliothek liburutegian dago. Ondoko estekan biltzen da informazio guztia: <http://data.onb.ac.at/rec/AC09700081>. Bestalde, Google Books atarian alea irakur eta jaits daiteke: http://books.google.es/books?id=pztRAAAAcAAJ.

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharrari dagokionez, hala eskuizkribuak nola inprimatuak ditugu. Lehendabizikoen kasuan, han edo hemen idatzitako testu solteak dira, eta ez ditugu garaiko lekukotasun batzuek[6] edo kopia berriagoak dituzten eskuizkribu ugari.[7] Nagusiki gutunak, sermoiak, ezkontza fedeak eta prozesuetako esaldi solteak dira euskarazko lekukotasun eskuizkribatuak eta beren izaeragatik beragatik bertsio gehiago izateko aukera gutxi dute.

Tradizio eskuizkribatuko testuetan lekukotasun gehiago izateak joko gehiago eman dezake: aldaerak erkatu, elkarren arteko harremana edo filiazioa zehaztu eta abar. Euskarazko lekukotasunei dagokienez, ordea, 1745 aurretik ez da halako aukerarik ematen duen lekukotasun asko (ik. Reguero 2019). Pérez Priegok (2011: 105) erakusten duen bezala, lekukotasun bakarra duten testuekin ez da *collatio*-rik, ezta *selectio*-rik ere. Aldiz, emankorragoak bide dira horietan *constitutio textus* delakoaren baitako *examinatio* eta *emendatio* faseak, baita *usus scribendi* eta testuaren historia ahalik eta zehazkien ezagutzea ere:

> Naturalmente, desde estrictos planteamientos críticos, es obligada la enmienda de los errores y anomalías detectados en el texto conservado, pero éstos no siempre resultan evidentes ni en todos los casos están claros los límites a que debe llegar la intervención del filólogo. A través de la *examinatio* analizaremos y determinaremos qué lecciones son auténticas y cuáles no, y en la fase de *emendatio*, procederemos a corregir éstas. Pero puesto que no podemos acudir a la *selectio* de variantes de otros testimonios, tenemos que proceder exclusivamente por *divinatio*, por conjetura. Es muy importante entonces conocer con la mayor precisión posible lo que en sentido amplio llamaríamos el *usus scribendi* y los pasos y peculiaridades de la tradición. Es decir, conocer muy bien el uso lingüístico de la obra y de la época, las particularidades dialectales, el uso estilístico y métrico del autor y del género, las características del manuscrito conservado, etc. Muy interesante será el estudio de la historia del texto, para proceder entonces desde una muy atenta *collatio externa*, de la misma manera que lo será el estudio contextual [Orduna 2005: 101-102]. Con todo ello se podrá intentar corregir los errores y establecer el texto crítico, pero muchas veces se plantearán serias dudas y dificultades irremontables.

Argitalpenei dagokienez, Blecuak (1983: 40-41) eta Pérez Priegok (2011: 87-88) adierazi bezala, mila ale izan arren lekukotasun bakartzat har litezke, funtsean alde handirik ez baitute. Hala ere, horien artean konparatu behar da inoiz nolabaiteko aldaketarik den begiratzeko.

Goi-nafarreraren kasuan, liburu inprimatu bakarra dago ale bat baino gehiago dituena; hain zuzen ere, Beriainen *Tratado de como se ha de oyr missa* (1621) liburua. Hala ere, ale ezagunen artean ez dugu alderik aurkitu. Areago, huts bera dute; hain zuzen ere, 89. orrialdean 98 orrialde zenbakia agertzen da begiratu ditugun bi aleetan. Bestalde, dirudienez, Elizalderen dotrinaren bi ale gutxienez iritsi dira xx. men-

[6] Zehazkiago esanda, Isastiren obrak —eta, beraz, bertako euskarazko testuek— baditu kopia gehiago (ik. § 2.2.19). Bestalde, Baztango 1750eko eliza-aginduak Elbete eta Elizondoko bertsioak ditu. Ik., orain, Reguero (2019).

[7] Muruzabalgo sermoien artean bada Satrustegik (1987) xviii. mende hasierakotzat daukan bat, *Pasce oves meas* izenburua duena; sermoi hark baditu kopia berriagoak, baina guztiak xviii. mendearen bigarren erdialdetik aurrerakoak. Gainera, Satrustegik mende hasierakotzat badu ere, sermoiak mendearen bigarren erdikoa dirudi hizkuntza aldetik.

dera. Azken urteetan baliatu den alea Patxi Salaberrik (1994a) ezagutzera emandakoa bada ere, bigarren ale bat ere badela dirudi; Irigaraik (1963c) argazki gisa dakarren Elizalderen liburuaren ataria ez da Nafarroako liburutegian Patxi Salaberrik (1994a) aurkitu zuen bera.

Kontuan izanik lekukotasun bakarrekoak direla 1745 aurretik goi-nafarreraz lekukotzen diren testu gehienak, tentu handiz egin behar da *examinatio*-a. Testua ongi ezagutu behar da *emendatio*-ari ekiteko, egindako zuzenketa oro aieruz egindakoa izango baita. Edozein zuzenketa egiteko, editoreak *locus*-aren edo zailtasunak dituen pasartearen *interpretatio*-a egin behar du; gainera, idazlearen *usus scribendi*-a ezagutzea ere ezinbesteko izango zaio (Orduna 1995: 53 eta aurrerago § 1.3.3). Areago, idazlearen *usus scribendi*-a ezagutzeko, edizio onen beharra dago; eta hemen ikusten da, inon baino gardenago, filologiaren eta hizkuntzaren historiaren arteko elkarlanaren beharra.

Demagun Beriainek *ohoc* eta *ehec* erakusleen agerraldi bana duela, eta beste guztietan beti *ohec* darabilela. Egoera horren aurrean filologoak bi bide ditu: testua ukitu gabe utzi eta, kasurik hoberenean, ohar baten bidez azaldu Beriainengan eta, oro har, lekukotasun nafar guztien artean, kasu bakarra hori dela.[8] Beste aukera da testuan eta, oro har, tradizio idatzian dauden *o(h)ec* ugariak kontuan izanda, alegia *usus scribendi*a ezagututa, *ohoc* eta *ehec*, biak, *ohec* jarrita zuzentzea; azalpena bera erraza izan daiteke, ez baitirudi zaila ondoko bokalak eragindako nahaste batez azaltzea. Gure edizioan azken bide hori hartu dugu; edonola ere, begira dagokion oharra.[9]

Filologoak darabilen *iudicium*-ak, ordea, ez du filologoa behartzen zalantzazko pasarte guztietan zuzenketak egitera; aitzitik, egokiago izan daiteke, batzuetan, testua bere horretan utzi eta pasarteak dituen zailtasunak dagokien oharrean aipatzea, eta ez datuetan oinarri gutxi duten konponbide prekarioak eskaintzea (Orduna 1995: 53). Bide horri jarraikiz, Miguel Elizalde eta bere izebaren arteko XVII. mende bukaerako gutunetan (§ 2.3.6) *olaianetan* irakurtzen duguna zuzendu eta *ola lanetan* proposatu dugu, horretarako arrazoiak emanda; dena den, zuzenketa erabat ziurra ez denez, oharrean beste zenbait aukera proposatu ditugu.

Ezagun denez, testu zaharren edizioak hainbat motatakoak izan daitezke (ik. Pérez Priego 2011: 101-103; Martí 2013). Batzuk faksimile hutsak dira, alegia, testuaren irudia, argazkia edo fotokopia ematen dute. Beste batzuk paleografikoak edo diplomatikoak dira, testua transkribatu ondoren, jatorrizkoari fideltasun handiena gordetzen diotenak, ezertxo ere aldatu gabe; testua bere horretan uzten da. Edizio interpretatzaileek diplomatikoek ez dituzten zenbait aldaketa dakartzate; esate baterako, puntuazioa eguneraturik izaten dute. Beste batzuk edizio gaurkotuak dira, hau da lekukotasuna egungo grafiaren eta puntuazioaren arabera ematen da, aldaketa gehiagorik gabe. Edizio kritikoa ere badago; mota honetako edizioen helburua aurrekoez haratago doa, xedea jatorrizkoa edo honetatik gertuen dagoen testua berreraikitzea baita (Pérez Priego 2011: 103). Martík (2013: 65) ongi laburbiltzen du edizio kritikoa zer den:

---

[8] EKCn bilaketa eginda, *ohok* eta *ehek* erabiltzen dituen bakarra Beriain da, eta autore honek behin bakarrik erabiltzen ditu.

[9] Ik. Axularren *Gero*ren edizio kritikoko zuzenketak direla eta Urgellek (2015a: viii-x) egindako gogoetak.

> Quam parlem d'edició crítica en referim a un text que reprodueix o recontrueix, amb la máxima fiabilitat, la voluntat de l'autor en publicar la seva obra. Tot allò que pugui alterar la substància (entesa com el significat) del discurs de l'autor ha de ser reconduït a la seva autèntica lliçó original. L'objectiu principal no és, doncs, a diferència dels dos tipus d'edicions anteriors [paleografikoa eta interpretatzailea], fixar-se en els petits detalls de grafia i llengua, sinó en l'autenticitat del text en tots els seus aspectes. L'editor, donc, ha d'esmenar el testimoni o testimonis en tot allò que s'allunyi de l'original (entès com text ideal que l'autor va publicar). És en les edicions crítiques que pren el seu sentit ls distinció entre lliçons formals i lliçons substancials. (Martí 2013: 65)

Ordunaren arabera (1990: 21), edizio kritiko batek testua ulertzeko beharrezko elementu eta azalpen guztiak izan behar ditu.

Modu horretako edizioak dira guk prestatu nahi izan ditugunak. Testuen transkribapen paleografiko batetik abiaturik, testuak aurretiaz finkatutako irizpideen arabera eman ditugu; grafia sistematizatuz, puntuazioa eguneratuz eta gure ustez hutsak liratekeenak zuzenduz, besteak beste. Esan gabe doa, egin ditugun zuzenketa guztien berri eman dugu aparatu kritikoan (gure edizioetan erabilitako irizpideak xeheki azaldu ditugu § 2.1 atalean).

Horrezaz landara, aitzindaritzat Mitxelena (*TAV*) eta Sarasola (*ConTAV*), edo berriagoa den *Euskal Testu Zaharren Bilduma Berria* proiektua hartu ditugu. Horietan egin den bezala, testu bakoitza hautatutako irizpideen arabera finkatu ondoren, bertako hizkuntzaren azterketa egin dugu; testuak ondo miatuta soilik ezagut baitaiteke hizkuntzaren nondik norakoa. Ez lehenago.

## 1.3. TESTUEN FIDAGARRITASUN MAILAZ ZENBAIT OHAR

Hizkuntzaren[10] historiaz aritu nahi duen hizkuntzalari, filologo edo dialektologo diakronista batek hainbat arazo topatzen ditu garai zaharragoko testuak aztertzean eta erabaki bat hartu behar duenean, dela ezaugarriaren hedaduraz dela kronologiaz.

Testuak ongi finkatu ondoren, horixe izan liteke diakronistak duen lanik gaitzenetakoa: Nola interpretatu testuetako hizkera? Testu zaharrekin dabilen diakronistaren buruhauste nagusietako bat da eskuartean duen lekukotasuna benetan garaiko hizkeraren isla garbia ote den. Soziolinguistikan edo dialektologia sinkronikoan, Labovez (1983 [1972]) geroztik, *behatzailearen paradoxa* kontzeptua erabiltzen da egoera zehatz bat azaltzeko: behatua izaten ari den objektuak —hiztunak, alegia— badaki ikertzailea bera aztertzen ari dela, eta horrek eragina izan dezake emaitzan:

> Anyone who begins to study language in its social context immediately encounters the classic methodological problem: the means used to gather the data interfere with the data to be gathered. The primary means of obtaining a large body of reliable

[10] Atal honek bi saio izan ditu ardatz: batetik, Aziti Bihia taldeak UEUrekin elkarlanean 2014ko udan antolatutako *Euskararen lekua munduan eta historian: mitoetatik egitateetara* izenburuko ikastaroan eman genuen «Euskalki idatzietan ahozko euskara» saioa eta, bestetik, 2015ean UEUrekin batera Aziti Bihiak Gasteizko Oihaneder euskararen etxean antolatutako *Euskararen historian barna: uste dugunetik dakigunera* ikastaroan Ricardo Gómez eta biok eman genuen «Euskararen historian barrena testuak bidaide: zer (ez) diote lekukotasunek euskara zaharraz?».

> data on the speech of one person is the individual tape-recorded interview. Interview speech is formal speech —not by any absolute measure, but by comparison with the vernacular of everyday life. On the whole, the interview is public speech —monitored and controlled in response to the presence of an outside observer. But even within in that definition, the investigator may wonder if the responses in a tape-recorded interview are not a special product of the interaction between the interviewer and the subject. (Labov 1972: 43)

Filologo eta diakronisten kasuan, jakina, behatzen dena testu idatziak dira, baina *dialektologo diakronistaren paradoxa* deitu dioguna dago, alegia, ez dakigu behatzen ari garen testua orduko hizkuntza mintzatuaren eredu garbia den.

Antzinako hizkeren grabaziorik ez denez, testu idatziak[11] dira hizkuntzalari historikook ditugun iturri bakarrak; ondorioz, iturri idatzien azterketatik egiten den hizkuntzaren deskribaketa oro hizkuntza idatziarena izango da, ez ahozkoarena. Dena den, gutxi edo asko, testuetan ahozko hizkerari buruzko informazioa agertzen da. Adibide gisa, *Appendix Probi* ezagunean (ik. Campbell 2004: 373-375), latinezko hitz zerrenda luze bat agertzen da, nola ahoskatu behar den eta nola ez erakusten duena. Zerrenda horretan forma okertzat hartzen direnek III eta IV. mendeko latinaren ahoskera, latin klasikoarekiko ezberdina, erakusten dute. Damurik, euskarazko testu zaharren kasuan ez dugu halako lekukotasun asko, baina bada, esate baterako, Pedro Madariagaren lekukotasuna, zeinak erakusten baitu XVI. mendean Bizkaian bokal sudurkariak bazirela:

> La N alguna vez se pronuncia escondida en las narices, como en oracioʌ, Ardaoa; y para denotar aquella n se debe sobreponer una cifra, desta manera, à modo de nariz ʌ. (Madariaga 1777 [1565]: 253)

Esan bezala, hizkuntzaren iragana ezagutzeko hizkuntzalariak duen lehen mailako iturria testu idatziak dira: inskripzioak, eskuizkribuak edo testu inprimatuak izan. Hiru mota hauek beren berezitasun, interes, zailtasun eta trabak dituzte. Inskripzioek batez ere akitanieraren berri (Gorrochategui 1984) eta maila apalagoan Erdi Aroko euskararen berri (Reguero 2011b) izateko balio izan dute.

Euskara arkaikoko eta zaharreko lekukotasunen artean, harrian zizelkaturiko lekukotasun gutxi dira. Plentzian badira XVII. mende hasierako armarri batean agertzen diren hiru errefrau (Zuloaga 2011). Goi-nafarreraz ere bada halakorik. Burundako Iturmendin dagoen Kurtederia jauregian XVIII. mende hasieran egindako armarri bat dago, euskarazko esaldi bat duena (ik. § 2.2.22). Gainera, herri beretik Aritzagako ermitara bidean dagoen 1712ko gurutze-bideko zenbait gurutzetan euskarazko esaldiak daude (ik. § 2.2.23).

Edonola ere, euskara arkaiko eta zaharra aztertzeko iturri nagusiak eskuizkribuak eta inprimatuak dira. Testu mota horiek ditugu goi-nafarrera arkaiko eta zaharraren kasuan ere. Zaharrenak XV. mendeaz geroztiko euskarazko eskuizkribuak ditugu, eta XVI. mendetik aurrera lehen liburu inprimatuak daude (ik. § 1.7.2).

Testu idatziak, asko edo gutxi, ahozko mintzotik ezberdinak dira. Izaera jasoagoa izan ohi dute, eta arkaismoetarako edo beste hizkera prestigiodunetatik ezauga-

[11] Testu idatziez ari garenean, euskara ez den beste hizkuntzaren batean idatzitako testuetan agertzen diren pertsona edo leku izenetatik eta esaldi laburretatik hasi, eta euskara hutsez idatzitako liburuetara bitartean dauden lekukotasunak hartzen ditugu kontuan.

rriak hartzeko joera izan dezakete. Lakarrak (1997: 463-464) gogorarazten duenez, hizkuntzaren historia gehienbat hizkuntza idatziaren historia da, eta ez da beti erraza horren eta ahozkoaren artean diren desberdintasunak jakiten.

Hori dela eta, testu baten aurrean gaudenean zenbait galdera etor daitezke burura:

a) Orduko hizkera mintzatua islatzen ote du?
b) Nola jakin benetan hizkera mintzatua islatzen ote duen?
c) Testu guztiek pisu bera ote dute orduko euskara mintzatua aztertzeko?

Ikertzailearentzat egoera idealena eskura duen testuaren informazio guzti-guztia izatea da: egilea eta honen jatorria, urtea eta testua non eta norako sortu zen jakiteaz gain, testua idatzi zen leku horretako ezaugarriak dituela, idazleak orduko ezaugarriak erabili dituela eta ez arkaismo galduak, etab. Nolanahi ere, askotan, egoera horretatik oso urrun gaude: esate baterako, maiz ez dakigu egilea zein den. Hortxe ditugu, besteak beste, *Refranes y Sentencias*, *Viva Jesus*, *Kadet eta Bettiriño*, XVIII. mendeko sermoi andana edo mende bereko dotrina argitaragabea (Reguero prestatzen-1). Horiekin dugun arazoa da zehatz nongoak diren jakiten zailak direla.

Beste batzuetan egilea, urtea eta herria jakin arren, orduko leku hartako euskararen berri gutxi dugu edo, okerrago dena, gaur euskara galdua dago bertan. Landuccik Gasteizko euskararen lekukotasun baliotsua utzi zigun, baina ez da garaiko ez geroagoko lekukotasun gehiago. Elizalde Gesalazko Muzkikoak euskarazko dotrina idatzi zuen, baina egun bertan euskara galdurik dago, eta gauza bera gertatzen da Lazarragaren obrarekin, Beriainenekin edo Nafarroako hainbat sermoirekin.

Geroago ikusiko dugun bezala (§ 1.3.2), Caminok (ik., besteak beste, 2003b: 43 eta hh.) testu fidagarri eta ez-fidagarrien arteko bereizketa egiten du, baina berriki Ulibarrik (2015: 60 eta hh.) testu dialektalen eta ez-dialektalen arteko bereizketa hori baztertu eta dialektotasun mailaz hitz egin du. Bat gatoz Ulibarrirekin (2015: 62) esaten duenean testu guztiak direla dialektalak, aldatzen dena komunikazio egoera dela eta testuek erregistro ezberdina izatean datzala arazoa, ez dialektal izatean.

Beraz, testu zahar baten aitzinean gaudenean, kontuan hartu behar diren irizpideak izan litezke, batetik, tradizio idatziak idazlearengan izan lezakeen pisua (§ 1.3.1) eta, bestetik, testua zein motatakoa den, zein komunikazio esparrutan eta zein helburutarako sortu den (§ 1.3.2). Bestalde, egile ezezaguna duten testuen kasuan, hauek beren eremu geografikoan edo dialektalean kokatzeko, testuaren ezaugarriak aztertu eta gainerako testuekin (§ 1.3.3) erkatu behar dira.

### 1.3.1. Tradizio idatziaren pisua

Hizkuntzalaritza historikoa eta filologia testu idatzian oinarritzen diren neurrian, tradizio idatziak izan duen pisua aztertu behar da. Manu Padillak (2011), esate baterako, erakutsi du *Kadet eta Bettiriño* idazlanean Larramendiren hiztegiaren eragina badela, eta Urgellek (2015b) erakutsi du Axularren obran Leizarragaren itzala antzematen dela.

1745 aurreko Nafarroako tradizio idatziaz den bezainbatez, gogotan izan behar bide ditugu honako hauek:

Batetik, 1745 aurreko Nafarroako tradizio idatzia ez da nahi bezain joria, eta ez dago tradizio sakon eta luzerik (cf. § 1.7.2 atala). Dakigunez, 1745 aurretik lau idaz-

leren bost liburu argitaratu ziren: Antso Eltsokoaren *Doctrina Christiana y pasto espiritual del alma para los que tienen cargo de almas y para todos estados, en Castellano y Vascuence* (1561) galdua dago eta, beraz, ezin jakin hizkeraz ezer. Bigarrenik, 1614. urtea baino lehen argitaratu zen katixima bat; gugana zatiak baino ez dira ailegatu (ik. § 2.3.2). Beriain idazle utergarrak bi liburu argitaratu zituen: meza entzuteko tratatu bat 1621ean (§ 2.4.1.1) eta dotrina 1626an (§ 2.4.1.2). Azkenik, Elizaldek 1735ean beste kristau dotrina bat idatzi eta argitaratu zuen (§ 2.4.2). Aztertzeko eta etorkizunean egitekoen zerrendan dago oraindik Elizalderengan aurreko autoreek izan zezaketen eragina. Beriainen kasuan, aurretik eragin zezaketen euskarazko liburu gutxi ditugu: Etxepare, Leizarraga, Materra, Antso Eltsokoaren dotrina eta zatika baino ezagutzen ez den 1614 aurreko nafarrerazko dotrina bakarrik; hala eta guztiz ere, aztertzeko dago horiek harengan izan zezaketen eragina.[12]

Bestetik, artean ez zegoen idazkera estandarrik, Nafarroa Garaian behinik behin. Hori, gure kasuan, batzuetan behintzat, abantaila izan liteke, ez baita literatur dialektoak eragin dezakeen hiperkarakterizaziorik. Izan ere, dialektoan idazten ari diren idazleek hizkera horretako ezaugarriak puzteko joera izan ohi dute (Maynor 1988: 110). Areago, autore batek bere hizkeratik aldentzen diren hautuak egin ditzake. Hego Euskal Herrian XVIII. mendearen bigarren erdialdetik aurrera, Larramendi akuilu, literatur euskalkiak garatu ziren eta horiek beste arazo bat dute askotan, ahozko hizkerarekiko fidagarritasuna balioesteko; hizkerak landuagoak dira: Larramendiren gramatika eta hiztegia esku artean izanda, testuan egitura konplexuagoak, neologismoak eta beste agertzen ziren. Eragin hauek guztiak lagungarri dira testuak datatzeko, baldin eta testuaren datarik ezagutzen ez bada.

Halakoak kontuan hartzea garrantzitsua da testuak dituzkeen eraginak (ahozkoak zein literaturazkoak) neurtzeko.

### 1.3.2. Testuen kategorizazioa: fidagarritasun eskala

Arestian (§ 1.3) aipatu dugunez, dialektologia egitean, horretarako balio duten eta ez dutenen artean banatu izan dira lekukotasunak. Hegoaldeko goi-nafarrera aztertzen duelarik, Caminok (2003b: 43-46) testu nafar ez horren fidagarriak aurkezten ditu; horien artean daude, bestek beste, guk hemen editatu eta aztertu ditugun Beriainen bi obrak, Elizalderen 1735eko dotrina eta 1743ko Obanosko bertsoak. Orobat, gure corpusetik kanpo dauden Markotegiren 1777ko sermoia eta Lizarraga Elkanokoak idatzitako predikuak ere ez bide dira fidagarriak. Ulibarrik (2015: 62), ordea, testu guztiak dialektaltzat har daitezkeela proposatu eta desberdintasuna *dialektaltasun mailan* dagoela dio:

> Gure ustez, testu erlatiboki diatopiko hauek (eta «idazki ez hain fidagarriak» oro har) ezin ditugu zuzenean testu ez-dialektaltzat hartu, pentsatzen baitugu idazlea bere mintzoa erabiltzen ari dela, hori bai, egoera komunikatibo zehatz batean. Koxka honetan dago, alegia, ea gai garen testuan diren ezaugarriak nongoak diren zehazten eta are lehen begiratuan «bitxiak» diruditen bestelako ezaugarriak zergatik ageri diren azaltzen; eta horretarako lanari ekitea beste biderik ez dago.

[12] Beriainen aurretik argitaratu ziren Betolatzaren dotrina eta *Refranes y Sentencias* bilduma ere, baina hauen eragina izatea besteena baino zailagoa dirudi.

Bat gatoz Ulibarriren dialektaltasunaren proposamenarekin; areago, gainera, hizkuntza estandarrik gabeko garaietan, idazleek beren hizkera ardatz hartu eta komunikazio egoeraren arabera eta inguruko prestigiodun hizkeren arabera, ezberdinak izan litezke testuak dituen beste lekuetatik hartutako ezaugarriak. Ubillosek gipuzkeraz idatzi bazuen ere, lapurteraren eragina izatea euskalki horrek zuen prestigioagatik izan liteke. Hizkuntzalari eta filologoon lana da, beraz, «espero ez genituzkeen» ezaugarriak nondik hartuak diren begiratzea.

Bide horretan, zein testu mota den eta testu mota horren helburuak zein diren ezagutzea interesgarri dateke. Bistan da, eskura ditugun testu zahar guztiak ez dira berdinak, helburu ezberdinetarako egindakoak dira eta luzera ezberdina dute: batzuk epaiketa bateko lekukotzak dira, esaldi eta testu laburrak; beste batzuk senitartekoren bati, lagun edo nagusiari bidalitako gutunak dira; herri bateko elizan irakurtzeko idatzi diren sermoiak ditugu, edo eskualdea baino hedadura zabalagoa izan dezaten espero den liburu argitaratuak ere badaude.

Schneiderrek (2003) dioenez, testuak testuinguru zehatz baterako sortu dira eta, beraz, ezaugarri zehatzak dituzte. Horregatik, testu moten araberako kategorizazio bat egiten du. Izatez, mailakatze hori gaur egun hitz egiten diren dialektoentzat pentsatua bada ere, iruditzen zaigu testu zaharren azterketarako eta dialektologia diakronikorako baliagarri izan daitekeela, *mutatis mutandis.*

Testu bakoitzak bere aldakortasuna badu ere, diskurtso parametroen arabera testuak bost multzotan bereizten ditu Schneiderrek (2003: 72-73). Jarraian aipatuko ditugu bost multzoak zein diren, adibideak testu zaharretara egokiturik:[13]

1. **Berehala jasoa** (*recorded*): Momentuan idatzia edo grabazio bidez jasoa, hizketaldi bat zuzenean jasotakoa. Testu zaharren kasuan, noski, jasotako hizketaldia gertatu zen une berean idatzia izan behar du, fonograforik ez baitzen 1877 baino lehen (ik., besteak beste, Brady 1999). Goi-nafarreraren kasuan, testu mota horren adibide izan litezke auzi-agirietan agertzen diren euskarazko esaldiak. Agiri horietan lekukoak orduan esandakoa fidelki jasotzen da, eta grabagailuen faltan ahozkotik gertuen dauden lekukotasunak dirateke. Gainera, Monteanok (2017: 51-52) azaltzen du testigantzak jasotzen zituzten funtzionario askok euskara ondo ezagutzen zutela. Areago, 1594ko ordenantza baten arabera, lekukoak gaztelaniaz bazekien, bere hitzak gaztelaniaz jasotzen ziren; aldiz, euskara besterik ez bazekien, itzulpenak leiala izan behar zuen edo, bestela, hitzez hitz jaso behar zen euskaraz esandakoa.[14] Areago, behin lekukotza jasota, funtzionarioak testiguak esandakoa irakurri behar zuen, eta ondo ego-

---

[13] Schneiderren terminoen euskarazko itzulpena *Euskararen historian barna: uste dugunetik dakigunera* ikastaroko «Euskararen historian barrena testuak bidaide: zer (ez) diote lekukotasunek euskara zaharraz?» eman genuen saiorako Ricardo Gómezek prestatutako materialetik hartu dut.

[14] Jimeno Juriok (1998: 177) honela jasotzen du ordenantzako pasartea: «Y asi mesmo hagan dezir a los testigos tras auerle leydo muy en particular y dadoles a entender los articulos, lo que saben y entienden cerca dellos, y asienten con mucha puntualidad lo que dixeren, y por las mismas palabras, lo que dixeren en quanto a los que supieren romance; y romanceando con toda fidelidad y propiedad las palabras que los bascongados dixeren, y siendo necesario o importante, poniendo las mismas palabras formales que dixeren los bascongados en bascuence, sin añadir ni quitar a lo que dixeren, ni glosar sus palabras. Y de todo lo que para esto fuere necesario, hagan auto publico al pie de las probanças, para que se entienda como han hecho sus oficios y han cumplido este auto».

nez gero, lekukoak azpian sinatzen zuen berak adierazitakoa ondo jasoa zegoela ziurtatzeko. Testigantzak, batzuk behinik behin, hitzez hitz jasotzen zirelako erakusgarri izan daiteke ondokoa kasua: Nafarroako Artxibo Nagusian dauden bi agiritan 1538ko prozesu bera aipatzen da, zeinetan lekuko batek euskaraz esandakoa biltzen baita (§ 2.2.8.20); guztira hiru aldiz: *erroy asa aspaldia hi egoçirich ago halquea* / *erro yasa aspaldian hi ego çirich ago ha alquea* eta *erroy asza aspaldian egoçiricago alquea*. Grafia eta hitz banaketa kontuak alde batera utzirik, bista da, kasu honetan, agiria idatzi zuenak/zutenek nahiko garbi eta modu fidagarrian jaso zu(t)ela lekukoak esandakoa: *erroi hatsa, aspaldian (hi) egotzirik hago, ahalkea!*

2. **Ondoren jasoa** (*recalled*). Testu mota hau sortzen da hizketaldi bat ondoren jasotzean, momentuan hartutako oharrak erabiliz edo oroimenaz baliatuz. Idazlearen asmoa hizketaldia hitzez hitz jasotzea da. Dena den, eragozpena da hizketaldia gertatu eta idatziz jarri bitartean pasa daitekeen denbora tartea eta bitarteko asko egotea. Goi-nafarreraren kasuan honen adibiderik izan dezakegu; izan ere, Isastik 1620 inguruan Karlos V.aren eta mandazain baten arteko elkarrizketa jaso zuen (§ 2.2.19.4). Aipatu erregea 1558an hil zen; beraz, elkarrizketarik izan bazen, urte hori baino lehenago izan behar izan zuen eta, ondorioz, gutxienez hirurogei bat urte pasatu ziren Isastik jaso arte. Nafarroatik atera gabe, 1541-1546. urteen bitartean idatzitako auzi batean Etxalekun 1491. urtean izandako gertakaria jasotzen da, eta bertan euskarazko kopla bat dago; kantatu eta mende erdi bat geroago idatzia. Gisa honetakoak dirateke, halaber, Nafarroatik kanpo, Garibaik jasotako baladak.
3. **Pentsatua** (*imagined*). Aurreko bi kasuetan testuak zuzeneko hizketaldia jasotzen bazuen, oraingoan, hartzailea alboan ez duenez, esan beharrean idatziz jartzean sortzen den testua da. Izatez, literatur lanekin duten muga oso gardena ez bada ere, kasu askotan testuok idazten dituztenek ez dute praktika handirik horretan eta murriztapenak dituzte. Nafarroan bada lekukotasun mota horren adibiderik: Berako olagizonaren gutunak (§ 2.3.4), Joseph Elizalderenak (§ 2.3.5) eta Miguel Elizalderen gutunak (§ 2.3.6) halakotzat har ditzakegu. Ohart gaitezen, gainera, lehen bi kasuetan, gutunen idazleek barkamena eskatzen diotela hartzaileari euskaraz idazteko duten trebezia eta praktika faltagatik. Jakina, hauetan norentzat idatzi den kontuan hartu beharko da, erregistro ezberdina erabil baitaiteke.

   Beharbada, sail honetan sar genitzake Nafarroan horren ugari diren sermoi, prediku eta herrietarako zehazki idatzitako dotrinak. Herri jakin batean, egun konkretu batean irakurtzeko sermoia, hizkera estandarrik ez dagoenez, bertakoan idazteko joera dagoela pentsa liteke; herri batean baino gehiagotan irakurtzeko bada, eskualdekoa, etab. Hala ere, horietan erregistro jasoagoa, oratoria edo estilo kontuak ezin atzendu ditzakegu.
4. **Behatua** (*observed*). Egoera hau bigarrenaren antzekoa da, baina kasu honetan hizkerari buruzko berezitasunak jasotzen dira. Halako adibide gutxi ditugu euskarazko lekukotasun zaharren artean, baina bat aipatzearren, hona ekar liteke 1648 inguruan Burunda eta Altsasu artean izandako auzi bateko agiriko adibidea (ik. § 2.2.8.7), *zuk* eta *zure mersedea* Burundan nola erabiltzen den aipatzen baita.

5. **Asmatua** (*invented*). Kasu hauetan hizketaldi asmatu eta hipotetikoak dira. Edonola ere, benetan gertatutakoak imita litezke. Testu zaharretan, idazle jantzien literatur testuak dituzkegu multzo honetan. Hizkera estandarrik ez dagoenez, idazleek beren hizkera har dezakete oinarri, baina erregistro jasoagoa erabiltzeaz gain, prestigioagatik edo tradizioagatik beste hizkeretako hizkuntza-ezaugarriak ere har ditzakete. Gainera, hirugarren sailekoak baino hartzaile kopuru altuago batentzat idatziak dira. Beraz, testu asmatuetan (hiper) zuzenketak eta beste dialektoetako hitz edo egitura mailegatuak egon daitezke. Badakigu, adibidez, Leizarragak Iparraldeko euskaldunentzat idatzi zuela eta Lapurdi, Nafarroa Behereko eta Zuberoako hitz eta egiturak erabili zituela. Nafarroa Garaira etorriz, Beriainen eta Elizalderen lanak sail horretan sar ditzakegu.

Jakina, sailkapen hori behin-behinekoa eta orokorra da, testu bakoitza beregaina baita eta bakoitzak bere berezitasun, oztopo eta arazoak baititu; argi dago testu guztiak ez daudela maila berean. Dena dela, gure ustez guztiak dira hizkuntzaren historia ezagutzeko baliagarri.

### 1.3.3. Testuen kokapena: *usus scribendi* eta aingura testuak

Dialektoaren bilakabidea ulertzeko testua geografikoki kokatzea beharrezkoa dela iruditzen zaigu, horrela ezaugarrien hedadura antzeman baitezakegu. Testua ondo finkatu eta kokatu nahi bada, egile eta jatorri ezaguna duten testuen kasuan, idazlearen *usus scribendi*-a jakin behar da, Pérez Priegok (2011: 209) «características particulares de la lengua y el estilo de un escritor, que permiten al editor reconstruir por analogía un determinado lugar del texto» deitzen duena, alegia. Horretarako, lekukotasuna sakon aztertu behar da, eta beharrezkoa da garaiko inguruko beste testuekin konparaketak egitea.

Balio bikoitza bide du egile ezaguneko testuak ondo aztertzeak. Batetik, dialektoa bera, eta honen bilakabidea, ezagutzeko parada ematen du; eta, bestetik, egilerik gabeko testuak geografikoki kokatzeko balio lezakete. Caminok (2009: 311) gogorarazten duenez, egile ezezaguneko testuak kokatzeko baliagarri da egile ezaguna duten testuak ongi aztertu eta kokatzea, gero egile ezezagunekoak ahalik eta ondoen kokatzeko, nahiz eta ez duten ziurtasun maila bera izango.

Deesek (1988: 144) bi testu mota bereizten ditu; batetik, *lehen mailako ebidentziak* ditugu eta, bestetik, *edibentzia deribatuak*. Azken horiek jatorri ezezaguneko testuak dira, dituzten hizkuntza-ezaugarrien bidez soilik koka daitezkeen testuak. Ulibarrik (2013a: 518, 2015: 65) data ezezagunekoak ere gehitzen ditu sail horretan, eta testuen jatorria ezagutzeko *aingura testuen* kontzeptua ekarri du gurera. Horren definizioa ere badakar:

> «Aingura testuak» hizkuntzaz kanpoko datuen bidez ondo kokatutako testuak dira (i.e. Dees-en *lehen mailako ebidentziak*) eta, lurralde zehatz bateko hizkeraren erakusgarritzat harturik, jatorri ezagunik gabeko testuak geografikoki zein eremuri dagozkion zehazten laguntzen dute. (Ulibarri 2015: 65)

Aingura testuez den bezainbatez, McIntoshen *Linguistic Atlas of Late Medieval English (LALME)* proiektuak finkatutako bideari jarraitzen dio Ulibarrik (2013,

2015) eta euskal dialektologian aplika daitekeela erakutsi du. Hain zuzen ere, sermoietan idatzirik eta artxiboetan sakabanaturik egon den dotrina anonimo orain arte ezezagun bat Arabako ipar-ekialdeko hizkeran idatzia dela frogatu du. Lan horretan, praktikan, aitzindari izan ditu, besteak beste, Mitxelena (1958a), Landucciren hizkera Araban kokatzean, edo Lakarra (1996), *Refranes y Sentencias* Bizkaiko ipar-mendebaldean kokatzean. Nafarroako testuei loturik, Caminok (2004b) erakusten du Deikazteluko predikua nongoa den zehatz ezin jakin badaiteke ere, Nafarroako hegoalde euskaldunean koka daitekeela Izarbeibarko testuetan agertzen diren ezaugarri bereizgarriekin duen loturagatik.

*Aingura testuen* metodologia horrek, zalantzarik gabe, Nafarroako testu zahar zenbait kokatzeko ere balio digulakoan gaude. Esate baterako, bada XVIII. mendeko bigarren erdialdekoa dirudien dotrina eskuizkribatu argitaragabe bat (Reguero prestatzen-1). Ez dugu dotrina horren egilerik ez urterik ezagutzen. Edonola ere, egile eta jatorri ezaguneko testuen azterketek lagundu digute testua Nafarroan kokatzen: besteak beste, *egonen* edo *izanen* gisako geroaldiak darabiltza, baina hasperenik ez. Gainera, Nafarroako mendebaldekoa, Araitz-Betelu edo Larraun inguruetakoa, izan daitekeela dirudi, Gipuzkoa erdialdean erabiltzen den *due* 'dute' baitarabil; halaber, **-onis* bukaera duten latindar maileguetan *-obe* egin da eta *razove* edo *leobe* gisako aldaerak ditu.

## 1.4. AURREKARIAK ETA IKERGAIAREN EGOERA

Liburu honetan ikergai hartu den euskalkiari *goi-nafarrera* deitu zaio Bonapartek hasitako tradizioari jarraikiz. Dena den, goraxeago ikusi den bezala, Zuazok (1998a eta geroko lanetan) *euskara nafarra* deitu dio. Saio honetan, ordea, Zuazoren izendatzeko era edo *nafarrera* deitura saihestu dira Nafarroa Behereko euskararekin nahasteko arriskurik egon ez dadin. Hortara, *goi-nafarrera* Nafarroa Garaiko mintzoa da.

Edonola ere, aurrerago zehaztuko den bezala (§ 1.6), *goi-nafarrera* ez bide da Nafarroa Garai osoan erabiltzen den euskalkia. Zaraitzuera eta erronkariera Nafarroa Garaiko euskalkiak diren arren, goi-nafarreratik bereizten dira (cf. Camino 2011b).[15]

Dakigula, ez da goi-nafarrera arkaiko eta zaharraren azterketa diakroniko monografikorik egin orain artean. Bada, dena dela, gure ikerketari ekiteko oinarrizko diratekeen zenbait lan, hala nola hegoaldeko goi-nafarrera zaharreko aditzaren azter-

[15] Nolanahi ere, orduko Nafarroako euskalkien arteko aldea nolakoa zen ezagutzeko lekukotasunak urriak dira eta zaila da ondorio handirik ateratzea. Monteanok (2017: 59) dakarrenez, Erronkaribarko eta Zaraitzuko dialektoek Nafarroako erdialdeko dialektoaren desberdina behar zuten izan. Horren alde ematen du Nafarroako Artxibo Nagusiko 98.507 prozesuko gertakaria. Antza denez, Jeronimo de Jubero ofiziala Erronkaribargo Urzainkira joan zen 1582an zortzi lekukori galdeketa egitera eta horietarik bostekin hitz egiteko itzultzailea behar izan zuen, bertako euskara ulertzen ez zuelakoan. Hala ere, interpretazioan egon daiteke arazoa: prozesuan *por no estar al cabo de la lengua vascongada* jartzen du eta hortik ateratzen du Monteanok bertako euskara ez zuela ezagutzen. Baina, beharbada, arazoa ez da dialektoa ez ulertzea, euskara ez ulertzea baizik. Monteanok berak dakarrenez, Jeronimo de Jubero tuterarra zen, eremu ez-euskaldunekoa, beraz. Hori dela eta, ausarta dirudi gertakari horretatik ondorioztatzea bateko eta besteko dialektoak oso ezberdinak zirela elkarren artean. Areago, liburu honetan jasotako Zaraitzuko lekukotasunetako ezaugarriak ez dira Nafarroako gainerako lekukotasunekin konparatuta oso desberdinak (§ 2.2.8.12).

keta (Aldai 1999) edo dialekto horretan idatzitako testuak aztertu dituzten ikerketak (besteak beste, Mitxelena 1964a, Sarasola 1983, Salaberri 1994b, Pagola 1995a, Altuna & Miranda 1995, Camino 2003a, 2003b) edo aztertu gabe ere testuak aurkeztu dituztenak (esaterako, Satrustegi 1987, Camino & Lakarra 1993).

Halaber, azken urteetan baditugu Nafarroako gaur egungo hainbat hizkera aztertu dituzten zenbait lan; ondoko hauek adibidez: Ultzama inguruetakoa (Ibarra 1995), Aezkoakoa (Camino 1997), Erroibar eta Esteribarko hizkerak (Ibarra 2000), Sakanakoa (Erdozia 2001, 2004), hegoaldeko goi-nafarrera (Camino 2003b), Baztan-Bidasoa inguruetakoa (Zelaieta 2008) eta Baztangoa (Salaburu & Lakar 2005), Burundakoa (Zuazo 2010a) eta Nafarroako ipar-mendebaldeko hizkerak (Apalauza 2012). Aipatu lan horiek, ordea, Caminorena (2003b) salbu, XX-XXI. mendeetako euskara nafarra dute aztergai. Faltan dugu, beraz, hizkera horien azterketa diakroniko sakonago eta orokorrago bat, testu zaharrak kontuan hartuko dituena. Nolanahi ere, ezagutza horri ekarpen ezin hobea egin dio, beste behin, Caminok (2013a). Beraz, Caminok (2008b eta 2013a) hasitako bideari jarraituz, gure lanaren egitekoa —asmoa horretan da behintzat— alderdi diakronikoan dugun hutsunea betetzen hastea da.

Ondoko lerroetan goi-nafarrerari buruz mintzatu izan diren zenbait autoreren lanak aipatuko ditugu. XVII. mendeko autore zaharrenetarik hasiko gara, nolabait erakusten dutelako ordurako bazela Nafarroa Garaian besteen aldean ezberdina zen hitz egiteko molde bat (§ 1.4.1). Ondoren, dialektologo modernoek esandakoa jasoko dugu. Jakina, euskalkien sailkapena egiten lehena izan zenez, L. L. Bonaparteren mapan goi-nafarrerak zuen lekuaren inguruan esan direnak laburbilduko ditugu (§ 1.4.2); jarraian, Caro Barojak esandakoak bilduko ditugu, tribuen eta euskalkien arteko lotura aztertu eta defendatu baitzuen (§1.4.3). Lotura bera defendatu eta goi-nafarrera diakronikoki begiratu zuen Rosa Miren Pagolak; haren ideiak ere jaso ditugu (§ 1.4.4). Bonaparteren sailkapena gainditu nahian, Zuazok 1998az geroztik egindako sailkapenetan goi-nafarreraz izan duen ikuspuntua ere iruzkinduko dugu (§ 1.4.5). Azkenik, Caminok hegoaldeko goi-nafarreraz idatzi dituen ideiak ere ekarri ditugu hona, bera izan baita, testu zaharrak kontuan hartuta, azpieuskalki hori sistematikoki aztertu duenetariko bat (§ 1.4.6).[16]

### 1.4.1. Autore zaharrak goi-nafarrerari buruz mintzo

Arnaud Oihenart historialari eta idazle zuberotarra izan zen XVII. mendean goi-nafarrerari buruzko lehen berria eman zuena. Haren ustez, orduko Nafarroako mintzamoldea Akitaniako euskaldunek zutenetik bereizten zen; baina desberdintasun gehiago ikusten zituen Nafarroaren eta Gipuzkoaren edo Nafarroaren eta Arabaren artean. Bereak dira hitzok:

> Caeterum in superioribus, declinationum & inflexionum regulis atque exemplis dialectum ferè Vascitanam secuti sumus, eam, inquam, quae illorum è Vasconibus Aquitanis, qui VASCI vulgò dicuntur, propria est. Ab hac nonnihil differt Nauarrica,

[16] Esan gabe doa atal honek, izatekotan, interes historiografikoa duela, ez direla autore horiek guztiak gure lanaren oinarri eta abiaburu izan eta ez gatozela beti bat aipatu autoreek esandakoekin.

plusculum Vardulica, seu Ipuscuana & Alauensis, omnium maximè Autrigonica seu Biscaina, quas hic sigillatim exponere aut inter se conferre non est nostri instituti: sed iam absolutis iis quae vniuersè de totâ Vasconum gente dicenda erant, ad ea quae de singulis illius populis & insignioribus familiis tratenda recepimus, expedienda accedamus. (Oihenart 1656: 72)

Por lo demás, en las reglas anteriores y en los ejemplos de las declinaciones y conjugaciones, hemos seguido casi únicamente el dialecto de la Vascitania, es decir, el usado por los vascos aquitanos, vulgarmente denominados los vascos en la actualidad. La forma navarra difiere no poco de ésta, más la de la Vardulia, o sea de Guipuzcoa y Alava, más que ninguna la autrigónica, o bizcaína, cuya exposición y mutua comparación en particular no es objeto de nuestro trabajo actual. (Oihenart 1926: 353)

Badirudi Axularrek ere, mende berean, Nafarroa Garaian besteetakotik ezberdina zen hizkera ikusi zuela:

Badakit, halaber, ezin heda naitekeiela euskarako minzatze molde guztietara. Zeren anhitz moldez eta diferentki minzatzen baitira Euskal Herrian: Nafarroa Garaian, Nafarroa Beherean, Zuberoan, Laphurdin, Bizkaian, Gipuzkoan, Alaba-herrian, eta bertze anhitz lekutan. (Axular 1643: § 8)

Dena den, ikuspuntu dialektaletik gatazkatsua izan liteke Axularren aipua, eremu dialektalak baino Euskal Herriko lurraldeak zerrendatzen baititu. Halere, bereizketa hori egiteak iradoki dezake orduko lapurtarrentzat, demagun, ezberdina zatekeela Nafarroa Garaian, Gipuzkoan edo Nafarroa Beherean egiten zen euskara.

Hurrengo mendean, Larramendik goi-nafarrera aipatu zuen bere lanetan. Hiztegian, gramatikan zein Gipuzkoaz idatzitako korografian Oihenarten iritzi bera aurkeztu zuen eta euskalki nafarrak lapurterarekin antzekotasun asko zituela adierazi. Badarik, bataren eta bestearen artean desberdintasun asko ere bazeudela zioen. Areago, dialektoaren beraren barnean aldakortasun handia zekusan Larramendik. Hain zuzen ere, 1764 inguruan idatzi zuen *Corografía de la provincia de Guipuzcoa* lanetik aterea da ondoko aipuan biltzen dira esanak:

El dialecto navarro coincide mucho con el labortano, pero se diferencia también en muchas cosas: y dentro del mismo dialecto hay variedad en la sintaxis; verbigracia, el abad de Uterga, en su doctrina, impresa el año 1626, dice en el Credo:

«Cein concebitu baitzen Espiritu Santuaren obraz: Jaio cen Virgina Mariaren baytatic:[17] pasatu zuen pasio dolorezcoa Poncio Pilato Juezaren azpian: Crucificatu izandu zen: ill zen, ta orci zuten: Jautsi cen, etc.» Y el Padre Eleizalde en su doctrina del año 1735 pone ese mismo sentido así:

«Cein concebitu baice Espiritu Sanduaren obraz: Jaio ce Andre Maria Virginaren ganic: padecitu zue Poncio Pilatoren manuaren[18] azpian: gurutcificatu zute: il zute, orci zute: Jautsi ce, etc.» Así tiene este dialecto otras diferencias, aún dentro de Navarra. (Larramendi 1950 [c. 1764]: 319)

---

[17] Larramendiren liburuan *bastatic* dator, baina argitaratzailearen hutsa bide da. Beriainen dotrinan *baytatic* dator-eta.

[18] Liburuan *maunaren* dator, baina huts garbia da.

Oihenarten, Axularren eta Larramendiren baieztapenak ez dira lan dialektologikoetatik ateratako ondorioak; aitzitik, egileek berek zuten irudipena da esaldi horien atzean dagoena. Beriainek ez arestiko autoreak bezain zehatz, baina Iruñeko euskara besteak baino aiseago ulertzen zela iritzi zion:

> Escrivo en Romance y bascuence lenguages deste obispado, y aunque en diferentes partes del ay en algunas cosas, diversos modos de hablar, yo escrivo el que se habla en Pamplona, cabeça deste reyno, y obispado de Navarra, que es el que se habla en la mayor parte del, donde se habla bascuence, y el que mejor se entiende en todas las partes, y quando a alguno le pareciere que en algunas cosas no se entiende de lo que escrivo en Romance puede sacar el bascuence que se usa en su tierra. (Beriain 1621: «Al lector»)

XIX. mendetik aurrera hasi ziren euskararekin loturiko lan dialektologikoak egiten, eta horretan aitzindari Bonaparte printzea dugu, ezagun denez.

### 1.4.2. L. L. Bonaparte (1869)

Atal honen sarreran aipatu bezala, ez da goi-nafarrera arkaiko eta zaharra osoki aztertzen duen aurrekaririk; alabaina, XIX. mendean gurean Bonapartek abiatutako dialektologia modernoak goi-nafarrera bazela erakutsi zuen, eta halaxe islatu zuen euskalkien sailkapenean.

Orotara lau sailkapen ezberdin egin zituen; 1869ko *Le verbe basque en tableaux* lanean eman zuen behin betiko sailkapena, baina aurretik beste hiru saiakera egin zituen (zehaztapen gehiagorako, ik. Yrizar 1981).

Printzeak sistematikoki aztertu zituen Nafarroa Garaiko hizkerak, eta hori egin ondoren bi euskalki nagusi bereizi zituen: iparraldeko goi-nafarrera batetik, eta hegoaldekoa bestetik. Era berean, gainerako euskararen dialektoekin egin bezala, Nafarroa Garaikoak ere zenbait azpieuskalkitan banatu zituen: iparraldeko goi-nafarreraren barnean Gipuzkoako nafarrera, Bortzirietakoa, Baztangoa, Araizkoa, Arakilgoa eta Ultzamakoa bereizi zituen eta hegoaldekoan mendebaldekoa, ekialdekoa eta Izarbeibarkoa; cf., esaterako, Pagola (1995b: 272) eta Zuazo (1998b: 1-2). Gisa berean, dialekto horietatik kanpo, beste dialektoekin sailkatu zituen zenbait hizkera nafar: gipuzkeran Burundako hizkera; lapurteran Zugarramurdi eta Urdazubikoak; zubereran Erronkaribarkoa; ekialdeko behe-nafarreran Zaraitzukoa eta mendebaldeko behe-nafarreran Aezkoakoa eta Luzaidekoa.[19]

Oro har, Bonaparteren sailkapenari jarraitzen badiogu ere, Azkuek *Diccionario vasco-español-francés* hiztegian aldaketa batzuk egin zizkion sailkapen zaharrari, tartean goi-nafarrera dialekto bakartzat hartzea:

> Las variantes introducidas por mí son: considerar el roncalés no como subdialecto suletino, sino dialecto, *y ver un solo dialecto en el alto nabarro* y uno también en

[19] Orreaga Ibarrak (1996) bere ikerketetan oinarrituta goi-nafarreraren beste banaketa bat proposatzen du. Ohiko iparralde/hegoalde banaketaren ordez, mendebaldea eta ekialdea bereizi beharko liratekeela defendatu du. Dena dela, egungo ikuspegitik egindako banaketa dela dirudi, eta ez bide dira kontuan hartu testu zaharrak eta bertan agertzen diren ezaugarriak. Gainera, ikusiko dugunez (§ 4.1), hegoaldeko eta iparraldeko hizkerak dialekto bakartzat hartzeko arrazoiak badaude.

> el bajo nabarro, teniendo por simples subdialectos el septentrional y meridional del primero y el oriental y occidental del último. (Azkue 1905-1906: xxvi-xxvii; etzana gurea)

### 1.4.3. J. Caro Baroja (1945)

Caro Barojak euskararen azterketa historikoari egindako ekarpen garrantzitsuen artean dago 1945ean argitaratu zen *Materiales para una historia de la lengua vasca en su relación con la latina* liburua. Euskararen historiaren alderdi anitz ikusten baditu ere, hona dialektoez dioenagatik ekarri dugu.

Bonaparteren sailkapena aurkeztean, onartu eta honela laburbiltzen du:

> 1.º Que en el grupo oriental están comprendidos, además de todos los dialectos y subdialectos vasco-franceses, los vasco-españoles del valle de Salazar y Aezcoa.
>
> 2.º Que el guipuzcoano propio se introduce en Navarra por el valle de la Borunda o Burunda.
>
> 3.º Que el alto-navarro septentrional llega hasta el mar por Irún y Fuenterrabía, siguiendo límites que durande la Edad Media tuvo el reino de Navarra.
>
> 4.º Que el vizcaíno se introduce en Guipúzcoa, en los pueblos de la cuenca del río Deva, y en Alava, en los limítrofes del valle de Oquendo, Villarreal, etc. (1945: 22).

Bonaparteren banaketa hori Ptolomeok egindako antzinateko tribuen banaketarekin erkatzen du. Hori eginda, besteak beste ondorioztatzen du baskoien iparraldeko mugak Gipuzkoan hitz egiten den nafarreraren eremuarekin bat egiten zuela, eta ez egungo Nafarroaren mugekin. Halaber, ikusten du hegoaldeko goi-nafarrerak hegoaldean eta hego-mendebaldean 1552an zituen mugak bat datozela antzinatean baskoiek zituztenekin (1945: 34); ez dakigu, ordea, nondik atera duen urte hori.

Ikusten denez, beraz, Caro Baroja Oihenartengandik datorren ideiaren, hots euskalkiak tribuekin lotzen dituen ideiaren defendatzaile da.

### 1.4.4. R. M. Pagola (1995b)

Pagolaren (1995b) saioa izan liteke goi-nafarrera diakronikoki aztertzen duen lan bakanetariko bat. Saio horretan goi-nafarreraren historia moduko bat egin du, zentzu zabalean, hau da, kanpoko eta barneko historia aztertu ditu.

Antzinatetik hasten da, geografo greziarrek (Estrabonek, Pliniok eta Ptolomeok) markatu zituzten muga historikoak kontuan hartuta. Ikerlana garaika banaturik du, esan bezala, antzinatearekin hasten da eta Erdi Aroarekin jarraitzen. Ondoren, XVI eta XVII. mendeak aztertzen ditu; haren ustez, garai hartan «euskararako nolabaiteko errenazimendua sortzen da eta euskal egoeraren lekukoak zehatzago agertzen hasten dira» (1995b: 262). Lekuko horiei begiraturik, orduko Nafarroa hirutan banatzen du:

> Hortaz, XVI. mendeko Nafarroako mapa linguistikoak, oro har, hiru zati nagusi ditu, bata euskaldun hutsa, bestea erromantzedun hutsa eta zati elebiduna bien tartean. Hona ekialdetik mendebalderantz listan erdaldun bezala agertzen direnak eta elebidun bezala hartzen ditugunak: Zarrakaztelu, Murillo el Fruto, Santakara, Pitillas,

> Beire, Olite eta Tafallatik igaroz, Artaxona, Mendigorria, Oteiza, Lizarra, Nazar eta Acedo, muga honetatik iparrerantz Iruñea, jakina. (1995b: 263)

Ondoren, XVIII, XIX eta XX. mendeei atal bana eskaintzen die. Orduko lekukotasunak aurkezten dira, eta euskarak izan zezakeen hedaduraz zertzelada batzuk ematen ditu. Azterketa linguistikoarekin hasi aurretik, Bonapartek egindako goi-nafarreraren azterketa azaltzen du, eta sailkapen hori Oihenartengandik datorren baina XX. mendean Caro Barojak garatu zuen ideiarekin lotzen du; alegia, banaketa dialektalak antzinaroko leinuen eta elizbarrutien banaketarekin lotzen ditu. Ordurako Mitxelenak «Lengua común y dialectos vascos» (1981) lan bikainean hipotesi hori erabat baztertu eta horretarako arrazoi sendoak eman arren, gai honetaz haren esanak ez ditu kontuan hartzen Pagolak. Hala ere, bibliografian lan hori aipatzen da, eta artikuluan bertan ere inoiz, baina beste kontu batzuengatik, agertzen da Mitxelenaren lana.

### 1.4.5. K. Zuazo (1998a, 1998b, 2003, 2008, 2014)

Azken urteetan Zuazok (1998a, 2003, 2008, 2014) egindako sailkapenean goi-nafarrera euskalki beregain gisa hartu eta *euskara nafarra* izendapena eman dio. Dialekto horrek, Zuazoren arabera, ezaugarri bereizgarri gutxi ditu (Zuazo 2003: 97).

Lau azpieuskalki bereizten ditu nafarreraren barnean (Zuazo 2008: 97-98; 2014: 112): ipar-sartaldekoa (Bortziriak, Malerreka, Bertizarana, Baztango Oronoz-Mugairi eta Basaburu Txikiko Beintza-Labaien, Goizueta eta Saldias), hego-sartaldekoa (Sakana), erdigunekoa (Ultzama, Lantz, Atetz, Anue eta Odieta) eta, azkenik, sartaldekoa (Erroibar eta Esteribar). Halaber, tarteko hizkeratzat hartzen ditu Baztan, Aezkoa eta Burundako hizkerak. Bonaparteren antzera, dialekto horretatik kanpo utzi ditu erronkariera eta zaraitzuera; horiek «ekialdeko nafarrera» izeneko dialekto beregaina osatuko lukete bere ustez.

### 1.4.6. I. Camino (2003a, 2003b, 2009)

Caminok (2003b) hego-nafarreraren[20] azterketa sakona egin eta, orduko beste lan batean (2003a) hasitako bide beretik, erakutsi du hego-nafarrera dei genezakeen hori XVIII-XIX. mendeetan bazela, baina ez dialekto beregain gisa, nafarrera osoago baten azpieuskalki bezala baizik:

> Guk ez dakusagu hego-nafarrera euskalkitzat, ez du horretarako aski beregaintasun edo nortasun, ez du aski berezitasun hizkuntza-ezaugarrietan. Nafarroa Garaian hein batez batasuna eta nortasuna dituen azpieuskalkitzat jotzen dugu, baina egun «nafarrera» deritzan dialekto horren barreneko atal bat da. (2003b: xvi)

Are gehiago, hegoaldeko goi-nafarrerazko lekukotasunak eta horietatik ateratako ehun eta berrogeita hemezortzi ezaugarri (cf. Camino 2003b: 145) zehazki aztertu ondoren, azpieuskalki horren barneko lau hizkera dakuski: «mendebaldekoan» daude

---

[20] Caminok *hego-nafarrera* deitzen duen azpidialektoa Bonapartez geroztik *hegoaldeko goi-nafarrera* deitu izan zaionari dagokio, gutxi gorabehera. Dena den, hegoaldeko eta iparraldeko goi-nafarrerak zer diren aurrerago azalduko dugu (§ 1.6).

Gesalatz, Goñerri, Ollaran eta Oltzako mintzoak; «hegoaldeko» hizkera Izarbeibarko euskara da; «erdialdeko hego nafarreraren» eremuan Eguesibar, Artzibar, hego Esteribar eta Erroibarko hizkerak sartzen ditu; eta azken multzoan, «ekialdekoan», Aezkoako hizkera dago, hegoaldeko goi-nafarreraren barneko hizkera den arren, Nafarroa Behereko ukitua baitu —ohartu gaitezen Bonapartek mendebaldeko behe-nafarreraren aldaeratzat hartu zuela—.

Horretaz landara, 2009an dialektologiari buruz argitaratutako eskuliburuan konbinazioen esklusibotasunaz aritzean, nafarrerak dituen bost ezaugarri esklusiboak (ik. § 3) eta ezaugarri bateratzaile ez esklusiboen sorta bat aurkezten ditu.

### 1.4.7. Laburbilduz

Funtsean, hiru motatako lanak ikusi ditugu arestian. Batetik, Caro Baroja eta, batez ere, Pagola ditugu; horiek tribuekin lotura duen azalpen historikoa eman diote goi-nafarrerari. Bestetik, Caminoren lana daukagu, zeinak hegoaldeko goi-nafarrera garaiz garai aztertu baitu, testuak aintzat harturik. Azkenik, Bonaparteren eta Zuazoren lanak ditugu; horiek garaian garaiko ikuspegi sinkronikotik egindako sailkapenak dira eta, oro har, ez bide dute kontuan hartzen hizkera hauek historian zehar izandako bilakaera. Zuazok bere lanetan garbi azpimarratzen du egin dituen ikerketan garrantzia «bizirik dauden» berrikuntzei bakarrik emango diela; ik. orain Zuazoren ikusmolde eta sailkapenari Lakarrak (2011: 177-178) egindako kritika interesgarria.

Badarik, gorago aipatu dugunez (cf. § 1.2.1), hizkerek edo dialektoek izan duten bilakabidea ezagutzeko —dialektologia diakronikoa egiteko— berrikuntzez gain, hizkerek dituzten arkaismoak ere kontuan hartu behar dira. Caminok (2009: 388) laburbildu bezala, «[a]lderdi kronologikoari dagokionez, hizkuntza-ezaugarriak bereizteko ohiko sistemari heltzea gauza beharra du dialektologiak: zuzen eta bidezko da ezaugarriak *berrikuntza / hautu / arkaismo* banaketaren arabera aztertzea».

## 1.5. ZERGATIK ETA ZERTARAKO IKERTU GOI-NAFARRERA ARKAIKO ETA ZAHARRA

Bonapartek, eta geroago Zuazok, euskalkien sailkapena egin arren, eta guk neurri batean sailkapen horiek gure lanerako kontuan izan arren, ez dugu uste euskalkiak eta haien mugak hertsiak, finkoak eta behin beti(ra)koak direnik. Are gutxiago, ez dugu uste, Caro Barojak eta Pagolak esan zutenaren kontrara, Antzin Aroko tribuen dialekto berberak direnik. Merezi du hona Martinez Aretaren hitzak ekartzea (2013b: 66):

> A history of the discussions held by Basque dialectologists on this question [euskararen dialekto kopuruaz ari da] would have no end. Besides, for the diachronist this issue is not decisive, since it consists in evaluating a current state of interrelations between speeches by equally considering all their elements, without trying to discriminate what is new and what is archaic.

Alegia, sailkapen batek dialektoek sinkronikoki elkarren artean duten harremana islatzen du, nahiz eta ezinbestean atzean diakronia egon. Aldiz, dialektoa

denbora kontuan hartuta aztertu nahi badugu, ezin egin daiteke sailkapen hertsirik. Adabegi batetik datorren dialekto batek, historiako uneren batean, beste adabegi batetik datorren dialekto baten eragina izan dezake —geografikoki ondoan egoteaz gain, harreman sozio-ekonomikoak dituztelako, adibidez—; aldiz, beste garai batean, dialekto berberak ondoko beste dialekto batekin izan dezake harremana. Ondorioz, ezaugarri batzuk difusioz heda daitezke (ik. Labov 2007 edo Aikhenvald & Dixon 2001).

Oro har hizkuntzek bezala, sortze, garatze eta heltze prozesuan aldaketa ugari izan dituzte euskararen dialekto historikoek, eta horiek aztertzea euskararen historia ezagutu eta ulertzeko ezinbesteko betebeharra da euskal hizkuntzalaritza eta filologiarentzat.

Arestian aipatu bezala, euskara zaharraren —eta bereziki euskalki zaharren— gaineko ikerketak ez dira ugari gurean. Goi-nafarrera zaharra dukegu adibideetarik bat; horregatik, hartu beharreko lantzat dugu Nafarroakoa testu zaharren edizio berriak egitea, testu horiek sistematikoki aztertzea, eta, era berean, euskalki nafarra diakronikoki ikertzea. Behar hau hauspotu bide du orain Lakarrak (2011), proposatu baitu EBZ Nafarroan sortu eta garatu zela (ik. § 4.1).

## 1.6. ZEDARRIAK: CORPUSA GEOGRAFIKOKI ETA KRONOLOGIKOKI MUGATZEN

Ez da beti erraza mugak ezartzea, ez batekoak ez bestekoak; baina lan egiteko, askotan, ezinbestean halakoak finkatu beste aukerarik ez da izaten. Gure kasuan ere ezin bestela izan. Hori dela eta, bai arestian aipatu ditugun lanaren helburuak betetzeko (ik. § 1.1), bai aztertu eta editatu beharreko testuak hautatu ahal izateko, zedarri kronologiko eta geografikoak ezarri behar izan ditugu. Ondorioz, corpusa eremu geografiko eta kronologiko zehatz batera mugatzen da. Mugak artifizialak izan litezke, interesen arabera ezarriak; eta guk jarritakoak ere interes bati jarraikiz ezarriak dira, ondoko puntuetan azalduko dugunez.

Esparru geografikoari dagokionez, esan dugun bezala, Bonapartek (1863) bi goinafarrera bereizi zituen, hegoaldekoa eta iparraldekoa. Ondoko mapan ikus daiteke banaketa:



**1. mapa**

Iparraldeko goi-nafarrera eta hegoaldekoa Bonaparteren mapan (1863)

Goiko mapan ikus daitekeenez, Bonapartek iparraldeko eta hegoaldeko goi-nafarrerak bereizi zituen. Era berean, dialekto horiek zenbait hizkeratan banatu zituen. Horrela, bost azpidialekto bereizi zituen iparraldeko goi-nafarreran: Gipuzkoakoa, Bortzirietakoa, Ultzamakoa, Araizkoa eta Arakilgoa:




**2. mapa**

Iparraldeko goi-nafarreraren azpidialektoak eta hizkerak (Yrizar 2008: 206)

Aldiz, hegoaldeko dialektoan Bonapartek hiru azpidialekto bereizi zituen: mendebaldekoa (Gulia, Oltza eta Zizur), Izarbeibarkoa (Gares) eta ekialdekoa (Olaibar, Erroibar, Auritz, Artzibar, Eguesibar). Ondoko mapan ikusten da argi banaketa:




Subdivisión del dialecto alto-navarro meridional en subdialectos y variedades.
Especificación del número de vascófonos de cada uno de ellos, en 1860-70, 1935 y 1970.

**3. mapa**

Hegoaldeko goi-nafarreraren azpidialektoak eta hizkerak (Yrizar 2008: 330)

Hegoaldeko goi-nafarrerak jasandako atzerakadaren ondorioz, asko murriztu da dialektoaren hedadura, batez ere xx. mendeaz geroztik. Ondoko mapan ikus daiteke zein den euskara nafarrak egun duen hedadura:




**4. mapa**

Goi-nafarrera gaur (Zuazo 2008)

Caminok (2003a, 2003b), hegoaldeko goi-nafarreraz idatzitako testuak sakon aztertu ondoren, erakutsi du iparraldeko eta hegoaldeko goi-nafarrerak dialekto beraren aldaerak besterik ez direla. Hori dela eta, ideia honi jarraitu diogu eta, biak euskalki bakarra osatzen dutela kontuan izanda, Bonaparteren bi goi-nafarrerak hitz egin ziren eremuak hartu ditugu aztergai. Ohart gaitezkeenez, goi-nafarrera da dialekto historikoen artean hedadura geografiko zabalena duena.[21]

Bestalde, Bonapartek goi-nafarreratik kanpo utzitako Burundako eta Aezkoako hizkerak ere goi-nafarreratzat hartu ditugu. Ikergaitik landa utziko dugu Erronkaribarko mintzoa, nahiz eta ez dugun erabat baztertu. Hango testu batzuk begiratu ditugu, batez ere hizkuntzaren azterketaren atala osatze aldera, goi-nafarreran ohikoak diren berrikuntzak ibar horietan ba ote diren egiaztatzeko. Aldiz, corpusean sartu dugu Zaraitzuko lekukotasunak, ez baitugu goi-nafarreratik bereizteko arrazoi sendorik aurkitu (ik. § 2.2.8.12). Bestalde, Nafarroa izan arren, gipuzkeraz hitz egiten omen duten eremuak ere sartu ditugu corpusean. Besteak beste, Araitz-Beteluko lekukotasun

[21] Honekin batera, hiztun kopuru gehien galdu duen euskalkia ere bada.

txiki bat dago (§ 2.2.8.6). Eskualde hauek ongi aztertzekoak dira, bai gipuzkerarekin eta bai nafarrerarekin zein harreman duten zehazteko. Kontuan izan behar da, gainera, XVI. mendeko gipuzkera artean ondo definitu gabe egon zitekeela. Halaber, gure corpusean sartu ditugu Zuazok (2008) zubi hizkeratzat hartzen dituen Gipuzkoako ipar-ekialdeko, Basaburuko, Larraungo eta Imozko lekukotasunak. Gainera, Apalauzak (2012: 527-528) erakutsi bezala, Basaburu Nagusiko, Larraungo hego-ekialdeko eta Imozko hizkerak nafartzat hartzeko arrazoiak badaude, dialektoaren ezaugarri esklusiboak baitituzte. Horrezaz gain, Gipuzkoa izan arren, Irun inguruko hizkera nafartzat hartu zuen Bonapartek eta zubi hizkeratzat Zuazok (1998). Guk Irun aldeko testuak ere kontuan izan eta aztertu ditugu (ik. Altuna & Miranda 1995).




**5. mapa**

1750 aurreko goi-nafarrerazko lekukotasunen kokalekua

Arestiko mapan islatu dugu 1750 aurretik goi-nafarrerazko lekukotasunak dituzten ibar, zendea eta udalerriak. Mapan Erronkaribar ere sartu dugu 1750 aurreko lekukotasunak dituelako, nahiz eta beste dialekto bat denez ez dugun gure corpusean sartu. Kolore grisez 1750 aurretik lekukotasunik ez duten eskualdeak markatu ditugu.[22]

Ikus dezakegunez, Nafarroako eremu zabaleko lekukotasunak ditugu. Dena den, desoreka handia dago kopuru eta luzerari dagokionez. Iparraldean lekukotasun gehiago ditugu hegoaldean eta ekialdean baino. Gainera, lekukotasun horien luzera ere ez da berdina, iparraldeko lekukotasun gehienak testu laburrak baitira. Bestalde, mapan ezin izan ditugu islatu geografikoki kokatu ezin izan ditugun testuak, hala nola Pater noster txikia, Von Harffen hiztegia, Juan Irañetaren gutuneko esaldia, Zannettiren kredoa, Ama Birjinari eskainitako erromantzea, Martin Salgadoren hamarrekoa, katixima zatiak eta 1729ko eta 1743ko sermoiak.

Goi-nafarrerak iparraldean, mendebaldean eta ekialdean dituen mugak garbi egon badaitezke ere, hegoalderantz noraino heltzen zen eztabaidatu izan da anitzetan. Hori gure egiteko nagusitik aldentzen denez, laburki bada ere Madariagak (2014: 632-674) bildutakoak emango ditugu. Han-hemenka agertzen diren zeharkako lekukotasunek egun euskara galdua duten Nafarroako hegoaldeko herrietan euskarak zukeen presentziaren berri ematen digute. Besteak beste, Mikel Burgik (2015a, 2015b) Uxuen XVII. mendearen bigarren erdialdean euskara hitz egiten zela erakusten duten datuak eman ditu. Era berean, Madariagak (2014: 632-674) azaldu du 1587an Iruñeko gotzainak egindako zerrendan (ik. Lekuona 1933) «romanzado» gisa agertzen diren herri batzuetan euskara hitz egiten zela. Zerrenda hartan Nafarroako 536 herri agertzen dira; horietarik 451 euskalduntzat hartzen dira, eta 58 erdalduntzat. Madariagak (2014: 634), Pagolaren (1994) lanari jarraituz, laburbiltzen duenez, erdalduntzat hartzen diren asko elebidunak ziren, besteak beste, Lizarra, Oteitza, Aiegi, Morentin, Muniain, Arroitz, Antzin, Acedo, Mendigorria, Artaxoa, Tafalla eta Iruñea. Bestalde, euskalduntzat hartzen diren zenbait herri ere elebiduntzat ditu Madariagak: Zangoza, Nabaskoze eta Erromantzatua. Madariagaren proposamena baieztatzen dute zuzeneko lekukotasunek, hain zuzen ere, erromantzearen eremukotzat hartutako herrietan euskarazko lekukotasunak agertu baitira. Esaterako, Barbaringo (§ 2.2.8.16), Iruñeko (§ 2.2.8.20) eta Artaxoako (§ 2.2.8.27) lekukotasunek erakusten dute bertan euskaraz ere hitz egiten zela. Lekuonak (1933) emandako datu horiekin, Apat-Etchebarnek (1974) ondoko mapa osatu zuen:

[22] Lanean zehar inoiz edo behin eskualdeak baino banaketa orokorragoak erabili ditugu; hartara, «iparraldea» aipatzen dugunean Bortziriak, Baztan eta Malerreka ditugu gogoan; aldiz, «ipar-mendebaldean» diogunean Larraun, Basaburu Txikia eta Araitz-Betelu dira buruan ditugun eskualdeak. «Mendebaldean» Sakana, Ameskoa, Deierri, Gesalatz, Goñerri eta Ollaran daude, eta «hegoaldean» Izarbeibar, Artaxoa, Orbaibar eta Ibargoiti ditugu. «Ekialdean» Itzagaondoa, Agoitz, Irunberri eta Longida daude, eta «ipar-ekialdean» Artzibar, Esteribar, Erroibar eta Aezkoa. Aitzitik, Iruñeko eta inguruko ibarrak «erdigunean» daude. Banaketa hori eginda, garbi utzi nahi dugu erabat geografikoa dela, ez linguistikoa. Beraz, demagun, esaten badugu mendebaldean *x* ezaugarria dagoela, ez dugu esaten eskualde horiek guztiek berdin egiten dutenik, baizik eta inguru horretan agertzen dela ezaugarria.




**6. mapa**

Euskararen mugak Nafarroan 1587an (Apat-Etchebarne 1974)

Azterketa eta datu berriagoetan oinarriturik, Monteanok (2017) antzeko hedadura proposatu du XVI. menderako. Edonola ere, kontuan hartu behar da Nafarroak hegoaldean duen euskararen muga ez dela gaztelaniaren iparraldeko muga; izan ere, Iruñean bertan eta handik hegoaldera, euskararekin batera gaztelania ere hitz egiten zen, eta euskaldun elebakarrak zeuden ber, gaztelaniadun elebakarrak ere egon bazeuden Nafarroako erdialde eta hegoaldean. Bestalde, Monteanok Nafarroako Artxibo Nagusiko eta Elizbarrutiko hainbat eta hainbat prozesu eta agiri begiratu ditu hizkuntzaren erabilaren informazio bila, eta ondorioztatu du orduko Nafarroako biztanleen % 60 eremu euskaldunean bizi zela eta gainerakoa gaztelaniaren eremuan (Monteano 2017: 44). 1553. urteko etxebizitza neurketa bateko datuak baliatuz,

Monteanok (2017: 245-246) ondorioztatu du Nafarroako erresuman 185.000 biztanle bizi zirela; horietarik 25.000 Nafarroa Beherean, 80.600 mendialdean (Iruñerrian eta iparraldeko ibarretan), 46.300 erdialdean eta 33.400 Erriberan. Gutxigora beherako datu horiek kontuan izanda, xvi. mendean goi-nafarreraz mintzo zen euskaldun kopurua 110.000 pertsona ingurukoa izan daiteke; horietarik batzuk, jakina, elebidunak ziratekeen. Horiei gehitu behar zaizkie euskararen beste dialekto bat hitz egiten zuten Zaraitzu eta Erronkariko biztanleak. Monteanok (2017) eta beste autoreek emandako datuak kontuan izanda, ondokoa genuke goi-nafarrerak Nafarroan lukeen hedadura, xvi. mendean:




**7. mapa**

Goi-nafarreraren hedadura xvi. mendean, Nafarroan

Mapan ikus daitekeenez, goi-nafarreraren eremuaren hegoaldeko zatia nagusiki elebiduna da; alegia, euskara eta gaztelania, bi hizkuntzak hitz egiten dira, baina ez nahitaez pertsona berberak biak. Azterketa sakonagoen beharrean bagaude ere, Erronkaribar eta Zaraitzuko dialektoak ere beregain irudikatzen dira mapan.

Kronologiari dagokionez, askotan ez da erraza hizkera edo hizkuntza baten periodizazioa egitea eta garaiak finkatzea. Goi-nafarrera arkaiko eta zaharraren garaiak definitzeko orduan, abiaburu gisa Lakarrak (1997) eta gerora Gorrochateguik eta Lakarrak (2001) egindako periodizazio proposamenak izan ditugu kontuan. Horien ustez, euskara arkaikoak 1545etik 1600erako garaia hartzen du eta zaharrak 1600etik 1745erakoa.

Edonola ere, 1545 aurreko Erdi Aroko euskararen eta 1545 ondoko euskara arkaikoaren artean dagoen ezberdintasun nagusia lekukotasun kopurua da, eta «funtsean garai bera» dira (Lakarra 1997: 516). Hori dela eta, goi-nafarreraz XV. mendeaz geroztik idatzi ziren testu laburrak ere kontuan hartu eta goi-nafarrera arkaikoaren barruan sartu ditugu. Zehazkiago esanda, euskararen dialekto historiko horretan idatzitako lehen testuetatik hasi gara (ik. zehatzago § 1.7).

Akabuko urtea zehazte aldera, zalantza handiagoa dago. 1745. urtea ez dute ausaz jarri; Larramendik euskararen tradizio idatzian izandako eragina ez da atzendu beharrekoa, eta zalantzarik gabe aldaketa handia ekarri zuen, gipuzkeraz hasi eta euskalki guztietara hedatu zena. Gainera, Padillak (2011) erakutsi du Larramendiren eragina uste baino goiztiarragoa dela, gipuzkeratik kanpo, lapurteran. Garai hori hartzen da «lehen euskara modernoaren» hasieratzat.

Funtsean, goi-nafarreraz dihardugula, irudi luke —eta hala erakusten saiatu gara— 1745. urtea justifikaturik dagoela. Hizkuntzaz barneko irizpideak kontuan hartuz, 1745az geroztiko testuetan badira aurrekoek ez dituzten hainbat berrikuntza edo ezaugarri berri; hori erakusten ahalegindu gara lan honetan. Aurrerago sakonago ikusiko badugu ere (ik. § 4.2.2), hemen aipa liteke, besteak beste, goi-nafarrerazko hizkera batzuetan ohikoa den *u_a* > *u_e* bilakabidea ez dela gertatu 1745 baino lehenagoko testuetan; eta hau lagungarria da urte jakinik gabeko testuak datatzeko.[23]

Gauza bera esan dezakegu datiboko *-agi* / *-egi* dela eta: Nafarroako hego-mendebaldekoa bide den ezaugarri hau (cf. Camino 2003b: 74) ez da 1750 aurretik lekukotzen; aldiz, XVIII. mendeko 50eko hamarkadatik aurrera ugari ditugu adibideak: pluraleko *baçuegui*, *fielegui* eta mugagabeko *Jesusegui*, *ioregui* 'ihori, inori' eta *eri betegui* 'eri bati'; singularrean adibide bakarra dugu eta *tristeari* dakar Juan Martin Iberokoak 1755eko sermoian (Ondarra 1996b). Era berean, 1751koa den Muruzabalen agertutako sermoi batean *amegui* 'amei', *lagunegui* 'lagunei' eta *vezinoegui* 'bezinoei' pluraleko formak ditugu (Satrustegi 1987). Lehenagoko testuetan, ordea, ez dugu halakorik aurkitu.

Bestalde, hizkuntzaz kanpoko eragileak kontuan izanik, XVIII. mendearen erdialdean aldaketa kualitatibo garrantzitsua gertatzen dela dirudi Nafarroako tradizio idatzian. Bateko, goi-nafarreraz idatzitako testuak ugaritzen hasten dira, batez ere sermoiak. Horren lekuko dira, besteak beste, Muruzabalgo sermoi andana —horietarik batzuk Satrustegik (1987) argitaratu zituen, eta badira bilduma berean 1747 eta 1748ko sermoi argitaragabeak ere—, Goizuetako 1753ko sermoia (Reguero 2015b), Goñerriko sermoi bilduma (Ondarra 1989a, 1993a, 1993b, 1994, etab.), Martinez Morentingo bien sermoiak (Lekuona 1973), Markotegiren sermoia (Knörr 1992),

[23] Satrustegik (1987: 50*)* XVII. mende bukaerakotzat dauka Urritzolako olerkia, baina *u_a* > *u_e* sistematikoa duen testu bakarra litzateke eta bestelako ezaugarriak kontuan izanda (grafia, kasu) Satrustegik esandakoa baino mende bete beranduagokoa izan litekeela pentsatzeko arrazoirik badugu.

1755etik aurrera Juan Martin Iberokok idatzitakoak (Ondarra 1996a, 1996b, 1998). Mikelestorena Lesakako apaizak 1749an argitaratu zuen *Cerura nay duenac ar dezaquean vide erraza* (Bidador 2004: 42-45 eta 2016: 79-81).

Larramendiren lanek goi-nafarrera idatzian izan zuten eragina oraindik ikertzeko dagoen gaia da, eta horri ekinez gero gure gaitik urrunduko ginateke. Dena dela, gainetik bada ere, han edo hemen XVIII. mendearen erdialdean badira Larramendiren *Hiztegi Hirukoitz*etik hartutako hitzak. Esate baterako, Orrioko 1750eko eliza-aginduaren itzulpenean *gaistaquinteguia* neologismoa agertzen da; hitz hori Larramendik hiztegian dakar *oficina de maldades* sarreraren ordain gisa. Bestalde, Juan Martin Iberokok nongo euskaraz idatzi zuen azaltzen diharduelarik, Ondarrak (1996a: 257) aitortzen du ez duela Larramendiren eraginik nabaritzen; nolanahi ere, beste lan batean (1996b) onartzen du lexiko aldetik Larramendiren eragina duela. Mikelestorena idazle lesakarraren dotrinak Larramendiren eragina duen oraindik aztertzeko dagoen lana da, baina badakigu Larramendirekin eta Mendibururekin harremana izan zuela (ik. Bidador 2004: 42-45 eta 2016: 79-81).

Ondorioz, badirudi goi-nafarreraren periodizazio bat egingo bagenu, XVIII. mendeko erdialde horretan bi garai bereizteko arrazoi aski sendoak badirela. Batetik, badakigu Larramendiren eragina iristen hasia zela, Juan Martin Iberokoren edo Mendibururen lanetan antzeman daitekeenez eta, bestetik, Larramendirekin zein Mendibururekin harreman zuzenak zituzten autore batzuek, bai behintzat Mikelestorenak (Bidador 2004). Horretaz gain, hizkuntzaren baitako ezaugarrien artean bada aldea garai batetik bestera. Azpiatal honetan, goraxeago azaldu dugunez (ik., halaber, § 4.2) XVIII. mendearen erdialdetik aurrera, lehenago lekukotzen ez diren ezaugarriak agertzen dira. Horiek zein diren eta non eta noiz agertzen diren aztertzeak, ziur, lagun lezake goi-nafarreraren historiaren bilakabidea ezagutzen. Bada, beraz, nondik heldu eta zeri ekin.

## 1.7. CORPUSAREN AURKEZPENA ETA GOGOETAK IZAERAZ ETA EGOERAZ

Atal hau bi azpiataletan bereizi dugu. Lehenengoan goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean idatzitako corpusa aurkeztu dugu, kronologikoki sailkatua (§ 1.7.1). Bigarren atalean, ordea, gogoeta egin dugu corpusaren izaeraz eta egoeraz (§ 1.7.2).

### 1.7.1. Corpusa

Azpiatal honen helburua da liburu honetan editatu eta aztertu ditugun testuak aurkeztea. Ikus daitekeenez, kronologikoki eman ditugu lekukotasunak, mendeka antolatuta. Bakoitzaren ondoan, aurreko edizioen erreferentzia bibliografikoa jarri dugu. Gurea baino lehen edizio bat baino gehiago duen lekukotasunik bada ere, bakarra eman dugu zerrenda honetan; eta horretarako erabili dugun irizpidea izan da edizio osoena eta azterketa duena izatea. Demagun, Amenduxen olerkiak edizio ugari ditu, baina guk zerrenda honetan Sainz Pezonagarena eman dugu ezagutzen dugun azkena berea izateaz gain, edizio filologiko osoena delako, gure ustean. Dena den, edizio bakoitzaren sarreran aipatu ditugu testu bakoitzak aurretik dituen edizio

guztiak. Bestalde, esaldien kasuan, ez dugu erreferentziarik eman, gehienak Maiorak (2011) argitaratutakoak direlako. Dena den, erreferentzia bibliografikoa zehaztu dugu Maiorak eman ez, baina beste ikertzaile batek emandako kasuetan. Amaitzeko, gure lanean lekukotasunei erreferentzia egiteko erabilitako laburdurak gehitu ditugu. Halere, lekukotasun batzuek ez dute laburdura, lanean halakorik erabili ez dugulako. Halaber, esaldiek ez dute laburdurarik, lanean erabili dugun erreferentzia sistemaren arabera herria eta urtea eman dugulako.

**XV. mendea**

Kokapen geografiko ezezaguneko esaldia (1415), (*TAV* § 2.2.16).
Matxin Zalbaren eta Martin San Martinen arteko gutunak (1416), (*ConTAV* § 4.2.1). lab. ZalbGut.
Nafarroako kondestableari eskainitako kopla (1494), (*TAV* § 3.1.13). lab. KondestBer.
Arnold von Harffen hiztegia (1496-1499), (*TAV* § 2.2.18).
Pater noster txikia (XV. mende bukaera), (*TAV* § 2.2.15). lab. PNoster

**XVI. mendea**

Breviariumeko hilabete izenak (1501), (Satrustegi 1987). lab. IruñEgut.
Uitziko ezkontza fedea (1506), (Satrustegi 1992). lab. EzkonUitz.
Iruñeko esaldia (1529).
Iruñeko esaldia (1535).
Arizkurengo ezkontza fedea (1535), (Satrustegi 1992). lab. EzkonArizk.
Goizuetako esaldia (1535).
Beorburuko ezkontza fedea (1536), (Satrustegi 1981). lab. EzkonBeorb.
Zarikiegiko esaldia (1536).
Orisoaingo esaldia (1536).
Iruñeko esaldia (1538).
Iruñeko esaldia (1538).
Etxalekuko bertsoa (1541-1546), (Urrizola 2007a). lab. EtxalekBer.
Utergako ezkontza fedea (1547), (Satrustegi 1977a). lab. EzkonUterg.
Olatzagutiko ezkontza fedea (1548), (Satrustegi 1987). lab. EzkonOlatz.
Lesakako esaldia (1549).
Juan Irañetak Pedro Iterori igorritako gutuna (1549), (Fagoaga 1961). lab. IrañGut.
Bakedaoko ezkontza fedea (1550), (Satrustegi 1987). lab. EzkonBaked.
Agoizko ezkontza fedea (1551), (Satrustegi 1992). lab. EzkonAgoitz.
Lekunberriko esaldia (1551).
Zufiko ezkontza fedea (1552), (Sarasola 1983). lab. EzkonZufia.
Henrike Borboikoaren jaiotza dela-eta egindako bertsoa (1553-1554), (Haritschelhar 1983). lab. HenBer.
Gorritiko esaldia (1554).
Etxauribarko Etxarriko esaldia (1554).
Galar zendeako Espartzako ezkontza fedea (1556), (Satrustegi 1977b). lab. EzkonEspar.
Lintzoaingo esaldia (1561).
Artaxoako esaldia (1561).
Artetako esaldia (1562).
Iruñeko esaldia (1562).
Iruñeko esaldia (1563).

Iruñeko esaldia (1563).
Amenduxen olerkia (1567), (Sainz Pezonaga 2006). lab. Amendux.
Eraulgo ezkontza gonbidapena (1564), (Satrustegi 1991a). lab. EraulGonb.
Arribeko esaldia (1564).
Eugiko esaldia (1565).
Igoako esaldia (1565).
Eugiko esaldia (1566).
Bakedaoko esaldia (1566).
Aizkoako esaldia (1567).
Ezkurrako esaldia (1569).
Ollogoiengo esaldia (1570).
Osinagako esaldia (1572).
Etxagueko esaldia (1572).
Artaxoako esaldia (1573).
Erretako esaldia (1575), (Itulain 2013).
Irunberriko esaldia (1575).
Irunberriko esaldia (1575).
Barbaringo esaldia (1576), (*ConTAV* § 5.2.4) .
Zenozko esaldia (1576), (*ConTAV* § 5.2.4).
Urritzola-Galaingo esaldia (1576), (*ConTAV* § 5.2.4).
Ostizko esaldia (1576), (*ConTAV* § 5.2.4).
Anueko esaldia (1576), (*ConTAV* § 5.2.4).
Zigako esaldiak (1576).
Anotzibarko esaldiak (1576).
Urralbeitiko San Vicenteko esaldiak (1578).
Orokietako esaldiak (1578).
Larrasoañako esaldia (1579).
Arlegiko esaldia (1581).
Iruñeko esaldia (1581).
Uxueko esaldia (1581).
Agoitzaldeko Urrozko esaldia (1582).
Iruñeko esaldia (1583).
Iruñeko esaldia (1593).
Ihabengo esaldia (1584).
Beintza-Labaiengo esaldia (1585).
Leitzako esaldia (1590).
Ezkarozeko esaldia (1590).
Barasoaingo esaldia (1593).
Iruñeko esaldia (1594).
Orbaibarko Santsoaingo esaldia (1594).
Puiuko esaldia (1596), (Urrizolak 2007b).
Iruñeko esaldia (1596).
Eguesko esaldia (1596).
Olatz-Txipiko esaldia (1596).
Iraizozko esaldia (1597), (*ConTAV* § 5.2.4).
Muzkiko esaldia (1597).
Eloko esaldia (1597), (*ConTAV* § 5.3.1).
Urdiaingo esaldia (1597).
Etxauriko esaldia (1598).
Otsagabiko esaldia (1598).

Uxueko esaldiak (1598).
Iruñeko esaldia (1599).
Nagoreko esaldia (1599).
Aresoko erlijio testuak (xvi. mendea), (Satrustegi 1990a, 1990b eta 1991b; ez testu guztiak) lab. AresOtoi.

**xvii. mendea**

Imarkoaingo koplak (1600), (Maiora 2011). lab. ImarKop.
Iruñeko esaldia (1600).
Aritzaletako esaldia (c. 1602), (Erdozia 2005).
Utergako esaldia (1602), (Satrustegi 1977).
Muruzabalgo esaldia (1605).
Iruñeko esaldia (1605).
Larrasoañako esaldia (1606).
Badostaingo esaldia (1606).
Artikako esaldia (1606).
Artaxoako esaldia (1607).
Oronozko esaldia (1606).
Aresoko esaldia (1608).
Lesakako esaldia (1609).
Izkueko esaldia (1609).
Ezkurraren olerkia (1609), (Kerejeta 1991). lab. EzkOl.
Aldazen olerkia (1609), (Kerejeta 1991). lab. AldOl.
Elizalderen olerkia (1609), (Kerejeta 1991). lab. ElOl.
Martinez Saratsakoaren lekukotasuna (1610), (Mensink 1958).
Intzako esaldia (1610), (*ConTAV* § 5.2.4).
Intzako esaldia (1611), (*ConTAV* § 5.2.4).
Arreko koplak (1612). lab. ArreKop.
Iruñeko esaldia (1612).
Zuriaingo esaldia (1613).
Elorzko esaldia (1613).
Katixima zatiak (1614 b.l.). lab. NafKat.
Zannettiren kredoa (1614), (*TAV* § 3.2.11). lab. Zannetti.
Larraungo Etxarriko esaldia (1614).
Olagueko esaldia (1615).
Orreagako amari eskainitako bertsoa (1617), (*TAV* § 3.1.24). lab. OrreBer.
Hiriberri Arakilgo esaldia (1619).
Isastiren salbea (c. 1620). lab. IsSal.
Miguel Sueskunen zortziduna (c. 1620). lab. Sueskun.
Isastiren errefrau bilduma (c. 1620). lab. IsEr.
Karlos V.a eta mandazainaren arteko elkarrizketa (c. 1620). lab. IsMan.
Beriainen meza entzuteko tratatua (1621). lab. Ber*Meza*.
Leitzako apaizaren aurkako auziko lekukotasuna (1626), (Satrustegi 1987). lab. LeitzAuzi.
Lesakako esaldia (1626).
Orreagako artxiboko esaldia (1626).
Beriainen dotrina (1626), (Pagola 1995a). lab. Ber*Dot*.
Irunberriko esaldia (1629), (*ConTAV* § 5.3.1).
Eloko esaldia (1629), (Satrustegi 1978-79).
Iruñeko esaldia (1632).

Goizuetako esaldia (1633).
Iruñeko esaldia (1640).
Atarrabiako esaldia (1647).
Altsasu/Burundako esaldiak (c.1648), (Erdozia 2005).
Baraibarko esaldia (1649).
Adiosko esaldia (c. 1650).
Iruñeko esaldia (1652).
Lepuzaingo esaldia (1653).
Ama Birjinari eskainitako erromantzea (1656), (Altuna 2006: 51). lab. EErrom.
Aroztegiko esaldia (1656).
Amaiurko esaldia (1659).
Añorbeko esaldia (1659).
Iruritako esaldia (1660).
Berriozarko esaldia (1661).
Arantzako esaldia (1663).
Luis Delcarteren lekukotasuna (1664).
Felipe IV.ari kantatutako bertsoak (1665), (*TAV* § 3.1.28). lab. FelBer.
Burlatako esaldia (1670), (*ConTAV* § 5.2.4).
Berako olagizonaren gutunak (1674-1676), (Urrizola 2006). lab. BeraGut.
Leitzako esaldia (1677).
Urdozko esaldia (1687), (Satrustegi 1987).
Untzueko esaldia (1691).
Joseph Elizalderen gutunak (1693-1699), (*ConTAV* § 5.2.9). lab. JElGut.
Artaxoko esaldia (1696), (Satrustegi 1978-79).
Miguel Elizalde eta honen izebaren arteko gutunak (1677 ondoren), (Mitxelena 1964b). lab. MElGut.

**XVIII. mendearen lehen erdialdea**

Kurtederia etxeko armarriko esaldia (XVIII. mende hasiera), (Santazilia 2014a).
Iturmendiko gurutze-bideko testua (1712), (Santazilia 2014b).
Irungo Udaleko agiriko euskarazko testuak (1721), (Altuna & Miranda 1995: 527). lab. Irun1721.
Nafarrerazko lehen sermoia (1729), (Ondarra 1981) lab. Serm1729.
Perotxegiren hamarrekoa (1731). lab. Perotxegi.
Elizalderen dotrina (1735). lab. El*Dot*.
Otsagabiko esaldia (1736).
Martin Salgadoren hamarrekoa (1739), (Bidador 1998).
Artaxoako esaldia (1742).
1743ko garizumako sermoi bat, (Satrustegi 1987). lab. Serm1743-1
1743ko garizumako beste sermoi bat, (Satrustegi 1987). lab. Serm1743-2
Ollo herriko bataio agiriko esaldia (1743), (Lekaroz 2013b).
Obanosko bertsoak (c. 1744), (Ondarra 1993a). lab. ObanosBer.

Testu horien guztien edizioak egin ditugun arren, hizkuntza-azterketaren atalean testu berriagoak ere kontuan izan ditugu, batik bat ezaugarrien kronologia eta hedadura geografikoa aztertzeko. Hori dela eta, Mikelestorenaren, Mendibururen, Lizarraga Elkanokoaren obrak eta Bonaparteren ondarean dauden testu nafarrak, hala nola Urizko eta Elizondoko dotrinak, kontsultatu ditugu.

### 1.7.2. Goi-nafarreraren tradizio idatziaz bi hitz

«The ability to represent language graphically, to make language visible, stands as one of humanity's greatest intellectual and cultural achievements»; halaxe azaltzen du Christopher Woodsek (2010: 15) idazkeraren sorreraz diharduela. Alegia, hizkuntza mintzatua idatziz islatzeak gizateriaren maila intelektual eta kultural gorena islatzen du. Ez dugu euskaldunen maila intelektual eta kulturalaren azterketa antropologiko edo soziologikorik egiteko asmorik, baina hainbat arrazoi direla medio euskara ez da, inguruko hizkuntzekin konparatuta, aski berandura arte idatzi, eta idazten hasi denean erabilera oso murritza izan du: izan ere, erlijiozkoak ez diren oso testu luze zahar gutxi ditugu.

Hori dela eta, euskararen edo euskalkien bilakabidea ezagutu nahi badugu, literatur testuekin batera bestelako testu motak ere kontuan izan behar ditugu; hau da, idatzitako edozein adierazpen hartzen dugu aztergai:

> Si restringimos el contenido de literatura escrita a las obras redactadas con cierto arte, belleza o corrección, en prosa o verso, debemos reconocer la pobreza del panorama literario en lengua de los navarros.
>
> El campo se amplía si aceptamos como tal cualquier expresión gráfica que tenga como vehículo la palabra, incluida la correspondencia epistolar o documentos administrativos. (Jimeno Jurío 1997: 119)

Oro har, tradizio idatziaren bidez gugana iritsi diren lekukotasunak bi eratakoak izan daitezke. Batzuk zuzenean iritsi dira, alegia, osorik daude euskaraz idatziak: liburuak, gutunak eta sermoiak, adibidez. Horiezaz landara, zeharkakoak ere baditugu; hau da, beste hizkuntza batean idatzitako agirietan edo liburuetan dauden euskarazko hitzak, esaldiak eta koplak, bertsoak edo bestelako testuak ditugu. Ezbairik gabe, testu guztiak beren osotasunean aztertu nahi dituen filologoak bi lekukotasun mota horien artean bereizten jakin behar du, bi motatakoek baitituzte eragozpen eta abantailak.

Zehazkiago mintzatuz, eta gurera etorriz, bietariko adibideak ditugu goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean. Alabaina, arkaikoan zeharkako lekukotasunak ugariagoak dira —prozesuetako esaldiak, ezkontza fedeak…—. Aldiz, euskara zaharrean zuzeneko lekukotasun gehiago agertzen dira; ordukoak dira goi-nafarraz idatzitako lehen liburu ezagunak. Gai hau dela eta datu interesgarria ematen du Jimeno Juríok (1997: 72):

> El panorama literario vasco en la Navarra pamplonesa era paupérrimo. La única excepción, original por las circunstancias de su vida y de su pequeña obra, fue *Juan de Amendux y Garro*, pamplonés (c. 1540-1580), quien, tras aprender a escribir en Valtierra y Tudela (1552-1554), redactó una elegía en su euskera natal, estando preso en la cárcel de Tafalla (1567).

Ordukoak dira tradizio idatziari bultzada eman zioten gertakari historiko nagusiak, zalantzarik gabe: Erreforma protestantea eta horri erantzuteko egin zen Trentoko Kontzilioaren kontrarreforma (Mitxelena 1960: 57). Lehenak batez ere Ipar Euskal Herrian izan zuen eragina eta horren isla bide dira Leizarragaren lanak. Hegoaldean, aldiz, Kontrarreformak ekarri zituen on-gaitzak. Gaitzak euskarazko testu luteranoak suntsitu bide zituelako, geroago ikusiko dugunez. Onak euskarazko zenbait testu idaztea ekarri zuelako: «El uso de las lenguas vernáculas en las prácticas re-

ligiosas y de culto, emprendidas por el protestantismo, acabó siendo aceptado por la Iglesia católica para la catequesis popular» (Jimeno Jurío 1997: 119).

Bestalde, 1594ko Errege Kontseiluak agindutakoaren arabera, komisarioak behartuta zeuden lekukoen adierazpenak hitzez hitz jasotzera eta leialtasun osoz itzultzera (Jimeno Jurío 1997: 114). Hori dela kausa, goi-nafarrera arkaikoko lekukotasun ugari gisa horretakoak dira. Alegia, garai hartako prozesuetan lekukoak esandakoa bere horretan jasotzen zuen idazkariak, eta euskarazko lekukotzak ere jaso ziren agirietan (ik. lan honetan 14. oin-oharra).

Laburbilduz, kontrarreformaren eraginez, goi-nafarrerazko erlijio testuak idazten hasi ziren XVI. mendean, baina ez da —edo ez da gugana heldu bederen— literatur sorkuntzarik edo Etxepareren edo Lazarragaren moduko idazlerik. Beraz, erlijio testuak eta prozesuetako esaldi solteak dira goi-nafarrera ezagutzeko iturri nagusiak.

Ziurrenik, ezagutzen dugun baino ugariagoak ziren XVI. mendean idatzi ziren euskarazko testuak, baina hauetarik batzuk galdurik dira. Baditugu gugana iritsi ez arren euskaraz idatzi zela dioten lekukotasunak; esaterako, Jimeno Juríok (1997: 74) aipatzen duenez, XVI. mendearen bigarren erdialdean, Agoitza ardo bila zihoazen gizon batzuei euskaraz idatzitako kartillak atzeman zizkieten. Idatzi protestanteak izanik, ziurrenik, kontrarreformaren ondorioz suntsitu egin zituzten, eta ezin jakin halako zenbat euskarazko testu galdu diren.

Galdutzat daukagu, halaber, goi-nafarreraz idatzia izan litekeen euskarazko lehen dotrina ezaguna. Hain zuzen ere, Antso Eltsokoak idatzitako *Doctrina christiana y pasto espiritual del alma para los que tienen cargo de almas y para todos estados, en castellano y vascuence* dukegu goi-nafarrerazko eta euskarazko lehen dotrina (Mitxelena 1960: 59; Urkizu 2000: 148), baina ez zaigu horren alerik iritsi eta dakigun apurra Isastik (1850 [*c.* 1620]: 164) emandako informaziogatik dakigu, besteak beste: «Escríbese tambien con facilidad como lo hizo el Licenciado Elso navarro de bascos, que há cien años escribió un libro de la doctrina cristiana en romance y bascuence». XVII. mendean bertan, Nicolas Antonio bibliografoak *Biblioteca Hispana Nova* liburuaren bigarren liburukian azaldu zuenez, XVI. mendearen erdialdean, 1561ean, Antso Eltsokoak katixima elebiduna argitaratu zuen Iruñean Adrian Anbereskoarenean, gaztelaniaz eta euskaraz. Latinezko edizioan hala dio: «Sancius de Elso, navarrus, duabus linguis ad intructionem civium suorum decit: *Doctrina christiana y pasto espiritual del alma para los que tienen cargo de almas y para todos estados, en castellano y vascuence*. Pampilonae, apud Adrianum de Ambers an. 1561 in 8» (*apud* Goñi Gaztambide 1995: 12). Dena dela, Goñi Gaztambidek (*ibid.*) zalantzan jartzen du Iruñean argitaratu ote zen eta datuetan oinarrituz Lizarran argitaratu zela proposatzen du. Ikerketa berrietan oinarrituz, ordea, Urrizolak (2006a: 134) erakutsi du liburua Iruñean hasi zela argitaratzen 1561ean eta, arazo zenbait direla medio, 1568an amaitu zirela argitaratze eta azaleztatze lanak:

> Según este interesante documento, Sancho de Elso encargó la impresión de su obra a dos impresores diferentes, uno instalado en Pamplona, Tomás Porralis de Saboya, y otro en Estella-Lizarra, Adrián de Anvers. Se sabe que Adrián de Anvers se trasladó a Pamplona procedente de Estella-Lizarra en 1568, y que anteriormente a esa fecha toda su actividad impresora la había desarrollado en la ciudad del Ega. Basándose en este dato, algunos historiadores dudaban si la fecha que Nicolás Antonio

> apuntó en su *Bibliotheca*, 1561, no fuese en realidad 1569, pues Anvers no poseía imprenta en Pamplona en 1561; pero una vez leído el anterior protocolo, bien pudiera ser que todo lo apuntado por Nicolás Antonio fuese cierto. (Impresor: Anvers; año: 1561; lugar de impresión: Pamplona)
>
> Adrián de Anvers, dada du notoriedad y experiencia, aparecería como impresor principal, aunque parte de la obra, o quizás toda, se imprimiese en el taller de Pamplona, regentado por el joven Tomás Porralis de Saboya. La fecha de 1561 sería la del comienzo del trabajo en sí, aunque al sufrir los conocidos incidentes sobre pagos y demás, la impresión no se terminó de realizar hasta pasados unos años, en 1568. (Urrizola 2006a: 134)

Tamalez, ez da liburuaren alerik ezagutzen, baina badakigu Antso Eltsokoak 1570ean Tuterako Juan Bastida mandazaina salatu zuela bere lana ongi ez egiteagatik. Azken honek Citruenigora eraman behar zituen guztira 850 errealeko balioa zuten 444 ale, baina ez zuen egitekoa bete (Goñi Gaztambide 1995; Bidador 2004: 16). Antso Eltsokoarenaz landa, Irigaraik (1963c) erakutsi zuenez, 1614an argitaratutako liburu baten azala osatzeko euskarazko dotrina baten zatiak erabili ziren (ik. § 2.3.2); inoiz iradoki izan da Antso Eltsokoarena ote den, baina ez dirudi hala denik (*ConTAV* § 5.2.8). Beraz, XVI. mendearen bukaeran euskarazko bi dotrina gutxienez bazeuden Nafarroan. Halaber, galdutzat jo behar dugu Juan Undianok idatzi bide zuen kantutegia (Estornés Lasa & Estornés Lasa 1970).

Europak —eta, beraz, Euskal Herriak— bizi zuen erlijiozko gatazken ondorioz, euskaraz idazteko ohitura aldatu egin zen eta XVII. mendetik aurrera euskaraz idatzitako zuzeneko lekukotasunen kopurua ugaritu egin zen, nabarmen gainera. Honatx zer dioen Sarasolak (1976: 43) orduko egoeraz: «La enseñanza religiosa conoció en este período un aire renovador, dándole al euskera una mayor importancia. La literatura vasca se llena de catecismos».

Gorakada, bereziki, Lapurdin izan zen, zalantzarik gabe. Hego Euskal Herrian ez zen, inondik inora, Ipar Euskal Herrian XVII. mendean bizi izandako loraldirik izan. Dakigunaren arabera, mende hartan Nafarroan bi liburu argitaratu ziren, biak autore berarenak, Utergako Juan Beriainek 1621ean idatzitako meza entzuteko tratatua eta 1626an idatzitako dotrina, hain zuzen ere (ik. § 2.4.1). Erlijiozko testu horiek garai hartan indarrean den joera batean kokatu behar direla uste dugu. XVII. mende hasieran, Mateo de Burgos izendatu zuten Iruñeko gotzain (1600-1606), eta haren aginduz eta Trentoko kontzilioaren esanei jarraituz, katekesietan euskara eskatzen hasi ziren; herritarrek euskaraz, eta ez latinez, ikasi behar zuten kristau ikasbidea (Jimeno Jurío 1998: 108). Trentoko erabakien ondoko hizkuntza-politika haren fruitu dira, beraz, Beriainen bi obrak eta, lehenago, Antso Eltsokoaren dotrina eta gugana zatituta iritsi den dotrina.

Liburu horiez landara, euskararen literaturan ezagun dira mende hartan, 1609an eta 1610ean, Corpus egunaren karietara antolatutako ospakizunak. Gorpuzti eguna arrazoi hartuta, literatur txapelketak antolatu ziren, eta bertan erlijio gaiak lantzen zituzten olerkiak aurkezten ziren. Saritutako olerkien artean, besteak beste, euskarazko olerkiak ere izan ziren: 1609an hiru eta 1610ean bakarra; ziurrenik gehiago ere lehiatuko ziren, baina ez dira gugana heldu. Sariketan euskarazko olerkiak agertu izanak erakusten du orduko Nafarroan bazela euskaraz maila jasoan idazteko gai zenik (ik. § 2.2.14).

Iritsi zaizkigun gutun apurrek (ik. § 2.2) ere erakusten dute euskaraz idazteko gai zen jendea bazegoela. XVIII. mendearen lehen erdian joerak berdin jarraitu zuen. 1700-1745 bitartean goi-nafarreraz idatzitako liburu argitaratu bakarra ezagutzen dugu, 1735eko Elizalderen dotrina hain zuzen ere (ik. § 2.4.2). Mende horren erdialdean aldaketa garrantzitsua gertatu zela dirudi; orduan hasten baitira predikari eta misiolariak beren sermoiak euskaraz idazten. Hain zuzen ere, ezagutzen dugun Nafarroako sermoi zaharrena 1729koa da; ondoren 1743an datatutako beste bi ditugu, eta 1748ko beste bat ere bada. Geroztiko urteetan nabarmen hazten da goi-nafarreraz idatzitako sermoi eta sermoigile kopurua. Hauetarik asko Ondarrak (1989a, 1993a, 1993b, 1994, 1996b, 1998) eta Satrustegik (1987) bildu eta argitaratu zituzten.

Jarraian dakargun taula honetan 2. atalean dauden testu motak erakutsi nahi izan ditugu, mende erdika antolaturik. Lekukotasun desoreka saiheste aldera, prozesuetako esaldi solteak ez ditugu kontuan hartu. Bestalde, egile beraren hiru gutun izan arren, bakartzat hartu ditugu. Isastiren lau testuak lau testu bezala kontatu ditugu, berak iturri ezberdinetatik hartuak baitira. Gugana iritsi ez direnak, Antso Eltsokoarena kasu, ez ditugu kontatu. Taulan testuak bi talde handitan banatu ditugu: eskuizkribatuak eta inprimatuak. Halaber, horien barruan, prosan ala poesian idatzita dauden, eta erlijiosoak direnak eta ez direnak ere bereizi ditugu.

**1.1. taula**

Goi-nafarreraz idatzitako testuak mende erdika

| | Eskuizkribuak | | | | Inprimatuak | | | | Guztira |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| | Prosa | | Poesia | | Prosa | | Poesia | | |
| | Ez erl. | Erl. | Ez erl. | Erl. | Ez erl. | Erl. | Ez erl. | Erl. | |
| XV | 2 | 1 | | | | | 1 | | 4 |
| XVIA | 7 | | 1 | | | | | | 8 |
| XVIB | 5 | | 1 | | | | 1 | | 7 |
| XVIIA | 4 | 2 | 3 | 1 | | 4 | | 3 | 17 |
| XVIIB | 3 | | | | | | 1 | 1 | 5 |
| XVIIIA | 2 | 4 | | | | 1 | 2 | 1 | 10 |
| **Guztira** | **23** | **7** | **5** | **1** | | **5** | **5** | **5** | **51** |
| % | %45 | %13 | %10 | %2 | | %10 | %10 | %10 | |

Bigarren taula aurrekoaren sinplifikazioa da, eta eskuizkribu eta inprimatuen artean erlijiozkoak zenbat diren eta zenbat ez diren zenbatu dugu:

**1.2. taula**

Goi-nafarreraz idatzitako testuak mendeka

| | Eskuizkribuak | | Inprimatuak | | Guztira | % |
|---|---|---|---|---|---|---|
| | Ez erl. | Erl. | Ez erl. | Erl. | | |
| XV | 2 | 1 | 1 | | 4 | % 8 |
| XVI | 14 | | 1 | | 15 | % 29 |
| XVII | 10 | 3 | 1 | 8 | 22 | % 43 |
| XVIII | 2 | 4 | 2 | 2 | 10 | % 20 |
| **Guztira** | **28** | **8** | **5** | **10** | **51** | |
| | **%55** | **%15** | **%10** | **%20** | | |

Bi taula horietan ikus dezakegunez, 1750 aurretik erlijiozkoak ez diren testuek geroago baino pisu gehiago dute. Lekukotasunen %65 ez da erlijiozkoa; aldiz, %35 erlijiozkoa da. Ikusten denez, XVII. mendean lekukotzen diren gutunek eta aurreko mendeko ezkontza fedeek erlijiozkoak ez direnen kopurua puztu dute. Egoera irauli egiten da, ordea, lekukotasunen luzera kontuan hartzen badugu; izan ere, Beriainen eta Elizalderen hiru obrek euskaraz idatzirik duten orrialde kopurua gainerako guztiak aintzat edukirik baino altuagoa da. Beraz, desoreka handia dago testigantzen artean.

XVIII. mendeaz den bezainbatez, datuak 1745. urte aurreko garaiari dagozkio, baina mende osoa hartuko bagenu, arras ezberdinak izango lirateke datuak. Eskuizkribaturiko erlijiozko testuen —batez ere sermoien— kopuruak nabarmen egiten baitu gora mendearen erdialdetik aurrera. Arestian aipatu bezala, garai hartan euskaraz aritzen ziren predikarien sermoi ugari ditugu. XVIII. mendean predikuak irakurtzen zituzten elizgizon andana ibili zen Nafarroako lurretan, eta horretarako euskara ere erabili zen herri euskaldunetan. Sermoi haietariko batzuen egileak ezagunak dira. Hor ditugu, besteak beste, Markotegi, Juan Iberokoa, Frantzisko Martinez Morentingoa eta Frantzisko Antonio Martinez Morentingoa. Hala ere, gehiago baziren eta horren erakusgarri dira Muruzabal eta Goñerriko egile ezezaguna dute sermoi bildumak. Predikari horiekin batera, erlijio-gizon idazle gehiago ere izan ziren: Mendiburu eta Mikelestorena ditugu mendearen bigarren erdialdean. Azkenak *Cerura nai duenac ar dezaquen vide erraza* (Iruñea, 1749) idatzi zuen eta hainbat argitalpen izan zituen. Mendiburuk, aldiz, lesakarrak baino liburu gehiago utzi zizkigun, besteak beste: *Jesusen bihotzaren debozioa* (1751), *Kristauaren dotrina* (1757), *Jesusen amore-nequeei dagozten cembait otoitz-gai* (1760). Idazle oparo eta emankorra izan zen, geroago, Joakin Lizarraga Elkanokoa; eta hau ere erlijio gaiez aritu zen.

Esan bezala, urriak izan arren, edizio onak eta azterketak merezi dituzte goi-nafarrera arkaiko eta zaharreko lekukotasunek. Ezagutzen diren testu gehienak argita-

raturik ditugu, asko Mitxelenak (1964a), Sarasolak (1983) eta Satrustegik (1987) bilduak dira. Hala ere, ez da ediziorik, ez gurean ez beste inon, behin betikoa denik. Ikerketan aitzinatu ahala beti dira beharrezko edizio kritiko eta interpretazio berriak. Horregatik, gure lan honetan orain arte ezagutzen ditugun testu guztiak, luze eta laburrak, bildu eta editatu ditugu; era berean, goi-nafarrera arkaiko eta zaharraren azterketa egiteko, finkatu ditugun testuetarik atera dugun informazioa baliatu dugu.

# II
# TESTUAK

Bigarren atal honetan, ezagutzen ditugun 1745 aurreko goi-nafarrerazko lekukotasun guztiak bildu ditugu, bai eta horien edizioak egiteko irizpideak ere (§ 2.1). Hori horrela, testuak tamainaren arabera ordenatu ditugu. Lehen multzoan lekukotasun laburrak sartu ditugu: esaldiak, ezkontza fedeak, kopla eta bertso solteak, etab. (§ 2.2). Bigarren azpiatalean, luzexeagoak diren lekukotasunak ditugu, besteak beste, sermoiak eta gutunak (§ 2.3). Azkenik, testu luzeak bildu ditugu, eta bertan daude ezagutzen ditugun hiru liburu argitaratuak (§ 2.4).

## 2.1. EDIZIO IRIZPIDEAK

Sánchez-Prietok (2011: 15) iradokitzen duenez, edizio kritiko batek ikertzailearen beharrak ase behar ditu eta, aldi berean, testuak ulergarriak izan daitezen saiatu behar du. Edizio paleografiko hutsak geroko hizkuntza azterketa zaildu lezake, kontuan izan behar baita orduko idazmoldea eta gaurkoa ez direla berdinak; gainera, paleografikoan hutsak zuzendu gabe geratuko lirateke. Horretaz gain, grafia ezberdina da kasu batzuetan, eta hitz banaketa eta puntuazio sistema beste modu batekoak izan litezke (cf. Pérez Priego 2011: 156-157). Hortaz, editorearen lana da oreka mantentzea eta beharrezko aldaketak, irizpide zehatz batzuei jarraituz finkatutakoak, egitea.

Oreka hau mantentzeko, gogoan izan behar da euskaraz berandura arte ez dela grafia sistematizatzeko saiakera orokorrik egon, eta askotan autoreek beren grafia sistema garatu dutela, askotan ahoskera islatzetik gertu leudekeenak; besteak beste, *duzube* eta *diyo* ahoskeratik aski gertu diruditen formak dira. Hala ere, irizpide etimologikoei edo historikoei jarraituz erabilitako grafiak ere badira: inolako balio fonologikorik gabe *b* / *v*-ren erabilera, demagun, edo *catholico*, *Christo* gisako idazkera kultista duten adibideak ere ez dira gutxi. Halaber, kontuan hartu behar dira euskararen kasuan beste hizkuntzen sistema grafikoa erabiltzeko joerak sor ditzakeen eragozpenak zenbait hots islatzeko, batez ere txistukari afrikatuak. Horrek guztiak eragindako kontraesanei aurre egin eta irizpide bateratua behar du editoreak.

Gure edizioak egiteko orduan, bi printzipio horiek kontuan izaten ahalegindu gara. Beraz, goi-nafarrerazko testuon edizioa egitean, batetik, kontuan izan dugu bertatik atera daitezkeen informazio eta datuak ahalik eta gardenenak izateko testuan grafiari dagozkion aldaketa beharrezkoenak egitea eta, bestetik, beste ikertzaile, irakurle zein interesatuentzat testua egokia izan dadin saiatu gara. Ediziorako irizpideak

hautatu eta finkatzeko, bereziki, CHARTAk (Red CHARTA 2013) aurkezten duen edizio kritikoak egiteko ereduan oinarrituko gara, beti ere eredua euskarazko testuetara egokituz.

Ondorioz, gurea edizio kritikoa izango da, transkripzio erdipaleografikoan oinarrituta. Behar-beharrezko aldaketak bakarrik egingo ditugu, grafia sistematizatzeko (ezen ez gaurkotzeko) helburuz eginak; idazlearen grafia sistemari eta idazmoldeari leial izango gatzaizkio, eta egindako aldaketa guztien berri emango dugu: orokorrak direnak irizpideetan, berezixeagoak direnak aparatu kritikoan.

Edizio bakoitzaren egitura dela eta, aurretik testu bakoitzak deskribapen edo aurkezpen bat izango du, eta bertan hainbat informazio emango dugu: eskuizkribua ala argitaratua den; egilea ezagutuz gero, nor den eta nongoa, zein urtetako den, gaur egun jatorrizkoa non dagoen, nork eman zuen lehenengoz ezagutzera, zenbat edizio izan dituen eta testuaz leudekeen aurreko ikerketak eta gainerako intereseko kontuak. Jarraian testua eskainiko dugu finkatu ditugun irizpideen arabera. Testuek aparatu kritikoa izango dute orripean; bertan, jatorrizkoan agertzen diren hutsak, paperaren egoera, zuloren bat ote dagoen, tatxaturiko pasarteak dauden, lerro arteko eransketak, beste editoreen interpretazioak eta bestelako gaiak gehitu ditugu. Amaieran, testuari dagokion hizkuntzazko iruzkina egingo dugu, grafia, fonologia, morfologia, sintaxia eta lexikoa aintzat hartuta. Iruzkina deskriptiboa izango da nagusiki, eta ez ditugu ondorio dialektologiko edo historikoak bertan aztertuko. Ondorio horiek hurrengo atalean, hizkuntzaren azterketaren atalean (§ 3) aurkeztuko ditugu. Kasu batzuetan, iruzkinetan interesezkoak diratekeen kontu soziolinguistikoak, historikoak edo kulturalak sartu ditugu, baina ez beti.

Gure edizioak prestatzeko, jatorrizko eskuizkribuak eta argitalpenak erabili ditugu ahal izan dugun neurrian, baina ez dugu izan testu batzuen jatorrizkoa ikusteko aukera; hala gertatu denean, dagokion edizioaren sarreran. Dena dela, jatorrizkoak ikusi edo ez, aurretik testuari buruz egin diren lanak kontuan hartu eta gurearekin erkatu ditugu, edizioa eta azterketa osoagoa izan dadin.

Amaitzeko, zenbait testuren edizio paleografikoa ere gehitu dugu, testuaren beraren izaerak hala eskatzen zuelako.

Testuen antolakuntzari dagokionez, hiru multzotan banaturik eman ditugu. Lehen multzoan (§ 2.2) testu laburrenak eman ditugu, hau da, koplak, esaldiak, olerkiak, gutunak eta bestelako testu laburrak. Bigarren multzoan (§ 2.3) luzexeagoak sartu ditugu: gutunak, sermoiak eta dotrinatxoren bat. Hirugarren eta azken atalean (§ 2.4) testu luzeak daude; bertan Beriain eta Elizalderen lanak aurki daitezke. Multzo bakoitzaren barnean, testuak kronologikoki antolaturik daude, zaharrenetik berrienera. Salbuespenak ezkontza fedeak (§ 2.2.7) eta esaldiak (§ 2.2.8); azpiatal bana osatzen dute, mota bakoitzeko testu guztiak batera emanda eta kronologikoki azpiatal bakoitzeko zaharrenari dagokion lekuan kokatuta. Zenbait testuk ez dute data ezagunik, baina guri dagokigun garaikotzat hartu izan dira; horiek eranskinetan eman ditugu, 1745-1750 bitarteko beste testu batzuekin batera. Haatik, Aresoko otoitzen kasuan urte zehatza ez dakigun arren, XVI. mende bukaerakoak direla pentsatzen dugunez, kronologikoki mende bukaerari dagokion lekuan agertzen da, data ezaguna duten beste testuekin batera.

### 2.1.1. Laburdurak

Agiri eta idatzi zaharretan ohikoak diren laburdurak osorik eman ditugu: *-mente* atzizkidun maileguak, *P*$^{o}$. → *Pedr*, *Luc*. → Lucas edo *Fran*$^{co}$. → *Francisco* pertsona edo santu izenak, *Xpto* → *Christo*, etab. Alabaina, gaur egun ere arruntak diren laburdurak agertuz gero, hala utzi ditugu: *Cap.* → *Cap* 'kapitulu'.

Euskarazko sermoietan horren erabiliak ez diren laburdura batzuk ere agertzen dira; esaterako, *jangoico*ren ordez *jang*$^{o}$. agertzen da, *jang*$^{n}$. genitiboa bada eta *jang*$^{i}$. datiboa bada; gauza bera gertatzen da *demonio*rekin. Hauek guztiak luzatu egin ditugu.

Ohikoa izan edo ez, aparatu kritikoan adierazi dugu jatorrizkoan laburdura dagoela.

### 2.1.2. Grafia

Grafiaren irizpideak finkatzerakoan edizio hauen helburu nagusia izan dugu kontuan, alegia § 3 eta § 4 ataletan egindako azterketa linguistiko eta dialektologikorako oinarria izatea. Hori dela eta, ez dugu jatorrizko grafia oso-osorik gorde (finean ez baita grafia aztertzea gure helburuetan sartzen) eta ezta grafia gaurkotu ere. Hona puntuz puntu egin ditugun aldaketak:

#### *2.1.2.1. <v> eta <u>*

Testu zaharretan <v> eta <u> agertzen dira, biak balio bokalikoarekin zein kontsonantikoarekin. Halakoetan, beren balio bokaliko edo kontsonantikoaren arabera erregularizatu ditugu, eta <v> kontsonanterako eta <u> bokalerako utzi dugu.

#### *2.1.2.2. <i>, <j> eta <y>*

Euskarazko testu zaharretan <i>, <j> eta <y> grafemek balio bokalikoa zein kontsonantikoa izan dezakete. Kontsonantea islatzen duten kasuetan, hala mantendu ditugu hiru grafiak; aitzitik, /i/ bokala eta diptongoetako /j/ bokalerdia adierazteko <i>-z gain, <j> eta <y> ere erabili izan dira; kasu horietan, <i>-ra aldatu ditugu <j> eta <y> bokalikoak: *nj* → *ni*, *yrur* → *irur*. Aldiz, bere horretan utzi dugu diptongoetako <y>, hala nola *nayz*; baina <i>-ra aldatu dugu <j>: *najz* → *naiz*.

#### *2.1.2.3. <h>*

Euskarazko testu zaharretan <h> grafema hainbat arrazoirengatik ager daiteke, baina zeinahi delarik ere testuetan <h> idazteko arrazoia, liburu honetako edizioetan <h> guztiak bere horretan utzi dira.

#### *2.1.2.4. Txistukariak*

Euskarak inguruko hizkuntzek baino txistukari gehiago izateak nahasmena eragin du hots horiek grafikoki islatzeko orduan. Honatx guk hartutako erabakiak:

Apikaria adierazteko, <s> eta <ss> erabiltzeaz gain, maiz <ʃ> ere aurki daiteke bestelako berezitasun fonikorik gabe; azken grafema honen kasuan, <s> eman dugu beti, eta <ss> hala mantendu dugu.

Txistukari bizkarkaria adierazteko <z> eta <ç> erabiltzen dira modu ez sistematikoan; bestalde, <e> eta <i> aurretik <c> ere agertzen da maiz. Grafia horiek guztiak, halaxe mantendu ditugu.

Kasu batzuetan, <c> ager daiteke <ç> ordez <a>, <o> eta <u> aurretik txistukari bizkarkaria adierazi nahirik: *ancarea* (EtxalekBer), esaterako. Hauetan erregularizatu egin dugu eta ohar bidez adierazi.

Afrikatuei dagokienez, maiz, ez da grafikoki afrikatu eta frikarien arteko desberdintasunik egin. Halakoetan ere ez dugu afrikatua markatu. Beste batzuetan, hainbat sistema erabili dira afrikatuak grafikoki bereizteko: <sc>, <sç>, <tç>… Halakoak bere horretan daude gure edizioan. Edonola ere, afrikatuak markatzea ez da sistematikoa, eta inoiz zalantza egon daiteke ahoskera zein den —batez ere ozen ondoko txistukarietan—; horiek iruzkinean aipatu ditugu.

### *2.1.2.5. Herskariak*

Ziurrenik beste hizkuntzen eraginez, /k/ hotsa zenbait modutara islatu izan da euskaraz. Batik bat Hegoaldeko testuetan gaztelaniazko *c/_a, o, u* eta *qu/_e, i* sistema berberari jarraitu zaio; baina inoiz <qu> erabili izan da <a> eta <o> bokalen aurretik: *vequala*, *helquar*, *alaquo*, *hiduricacequo*, *estrauquo*. Horiek *qua* → *ca* eta *quo* → *co* aldatu ditugu. Horrezaz gain, bukaerako herskari ahoskaberako ere erabili da <q>: *orreq*. Testuak zenbat eta zaharragoak izan, orduan eta errazago halakoak topatzea; eta hala utzi ditugu. Bestalde, batzuetan <q> agertzen da <u> aurretik, baina bokala ahoskatu behar da: *esquac*, *arzequa*, *buruqua*. Horiek bere horretan utzi ditugu. Halaber, <guo> eta <gua> ager daitezke adibideren batean; horietan, *gua* → *ga* eta *guo* → *go* aldatu dugu, eta aparatu kritikoan aipatu: *daguoenau* → *dagoenau*, *garaguarrilla* → *garagarrilla*.

Inoiz gerta daiteke, <ç> agertzea herskaria islatzeko eta ez txistukaria; horietan erregularizatu eta ohar bidez adierazi dugu. Bestalde, kasuren batean <c> herskaria islatzeko erabili da /i/ aurretik: *chicia*. Horrelakoetan hala utzi dugu.

### *2.1.2.6. Sudurkari sabaikaria*

Sudurkari sabaikaria ez da beti berdin adierazten. Gehienetan <ñ> edo gainean puntua daraman <n> baten bidez idazten da, baina zalantza dago <in> eta <yn> digrafoek sabaikaria islatzen ote duten; ziurrenik, batzuetan behintzat digrafoak sabaikaria islatzen du. Hala ere, digrafoa mantendu dugu.

Beste batzuetan, grafia defektiboa izaten da eta <n> ager daiteke; halakoetan, ziur gauden kasuetan, <ñ> editatu dugu eta aparatu kritikoan adierazi.

### *2.1.2.7. Dardarkariak*

Dardarkariei dagokienez, maiz grafikoki bakuna eta anizkuna ez dira bereizten, eskuizkribuetan bereziki, eta <r> ager daiteke bakuna zein anizkuna islatzeko. Ha-

lakoetan, egoera erregularizatu dugu; horretarako, bakuna <r> eta anizkuna <rr> markatu dugu, baina aparatu kritikoan ohar paleografiko baten bidez adieraziz. Eskuizkribu batzuetan, anizkuna adierazteko <R> erabiltzen da; hauek <rr> digrafoarekin erregularizatu eta aparatu kritikoan adierazi ditugu, hitz hasierakoak izan ezik; azken horiek <r> eman ditugu. Kontsonante aurretik, ondoren edo hitz amaieran, ahoskera aldetik anizkuna izan eta <rr> idatzi bada, hala mantendu dugu: *arrtu*, *onrra*, *aquerr*.

#### *2.1.2.8. Diakritikoak*

Kasu gutxi batzuetan kontsonante sudurkarien ordez aurreko bokalari < ˜ > diakritikoa erantsi zaionetan, ikurra kendu eta dagokion kontsonante sudurkaria jarri dugu. Liburu argitaratuetan ohikoa denez, ez dugu adierazteko beharrik ikusi; eskuizkribuen kasuan, ordea, aparatu kritikoan adierazi dugu.

Bestalde, zenbait testuk azentua marka lezaketen diakritikoak dituzte. Testuetan <`>, <´> eta <^> agertzen badira ere, guk beti eman dugu <´>, eta iruzkinean azaldu dugu jatorrizkoan agertzen den ikurra.

#### *2.1.2.9. Idazkera kultua*

Ohituragatik, etimologia mantentzeagatik edo eragin kulturalagatik, bereziki latinetik hartutako mailegu erlijiozkoek jatorrizko idazkera mantendu dute testu zaharretan, eta guk bere horretan utzi ditugu: *Christio, Catholico*, *spiritu*, *scribau*.

#### *2.1.2.10. Letra larri eta xeheak*

Letra larri eta xeheei dagokienez, testuek maiz ez dute inolako sistematikotasunik. Gure edizioan gaurko usadioari jarraitu diogu.

### **2.1.3. Hitzen banaketa**

Hitzen banaketari dagokionez, egungo euskara estandarrean erabiltzen den ohiko banaketari jarraiki diogu, honako salbuespen hauetan izan ezik:

a) Ezezko perpausak sortzeko *ez* partikula adizki jokatu bati loturik ageri bada eta aldaketa morfofonologikorik gertatu bada, bere horretan mantendu dugu: *eçuen eçela*, *eztela*.
b) Halaber, aditz nagusiaren azken kontsonantea eta laguntzailearen aurrenekoa asimilatu direnean, bere horretan utzi dugu: *erranion*. Inolako asimilazio edo aldaketarik ez bada, bereizi egin ditugu.
c) Bestalde, euskaraz idatzitako testu zaharretan *au* eta *ori* izenari lotuak joan daitezke eta batzuetan artikuluak izan litezke. Erakusleak diratekeenak bereiz jarri ditugu eta artikulutzat har litezkeenak batera.
d) Elkarturik utzi dugu *baterere*.
e) Inoiz hitz banaketa birmoldatzearen ondorioz gelditu diren ezohiko adibideak egokitu egin ditugu, testuaren ohiko idazkerari jarraituz: *niquere* → *nic ere.*

Hori horrela, batzuetan, <n>-z bukatzen den hitzari <b>-z hasten den batek jarraitzen badio, hitza batera idatzi eta <mb> idatzi izan da, bi hitzak batuta. Halakoetan, bi hitzak banatu egin ditugu eta <n>-ra aldatu dugu hitz bukaera: *guizombat* → *guizon bat*. Aldiz, hots aldaketarik izan bada, hala utzi dugu: *galampat* → *galampat*.

### 2.1.4. Puntuazioa

Puntuazio ikurren erabilera dela eta, gaur egungo ohiko erabilerari jarraitu diogu. Horrela, testua ulerterrazagoa izateaz gainera, orduko sintaxia ulertzeko ere lagungarri dateke.

### 2.1.5. Testuaren antolamendua: lerroak, paragrafoak eta orrialdeak

Gure edizioan paragrafoak bere horretan utzi ditugu eta lerroak modu jarraian idatzi ditugu. Bertso, olerki eta koplak, prosaz idatzita egon arren, bertso gisa eman ditugu, bertso-lerroak eskuinean bosnaka zenbakituta eta, hala balegokio, ahapaldiak bereizita.

Orrialdeak direla eta, jatorrizkoan orrialde berria hasten denean < > ikurren bidez adierazi dugu, barruan orrialde zenbakia eta, hala balegokio, *r* eta *v* laburdurak erabiliz. Orrialde batean zutabe bat baino gehiago bada, *r* edo *v* ondoan *a*, *b*… jarri dugu; beraz, <1va> lehenengo orriko ifrentzuko ezkerreko zutabea izango da, eta <1vb> eskuinean dagoena. Orrialdea amaitzean hitza banatzen bada, *gucie- <137v> -nac* kasu, orrialde zenbakia hitzaren bukaeran jarri dugu: *gucienac <137v>*.

### 2.1.6. Erdarazko hitz eta esaldiak

Erdarazko hitz, esaldi eta egiturak bi motakoak izan daitezke. Batetik, mailegutzat edo makulutzat hartutako *en fin* eta gisakoak. Hauek jatorrizkoan dauden bezala utzi ditugu. Bestetik, nagusiki latinetik hartutako esaldi eta aipuak daude, sermoi askotan azpimarraturik emanda. Kasu honetan, letra etzanez eman ditugu.

Hauekin batera, batez ere esaldietan, euskarazko lekukotasuna ematean, testuinguru gisa, inguruan duen erdarazko pasartea jarri dugu. Horiek aurkezteko CHARTAk edizio kritikoak egiteko ematen dituen irizpideei jarraitu diegu; hori horrela, letra biribilez erdarazko testuak, etzanaz euskarazkoak.

### 2.1.7. Ikur diakritikoak

Testu batzuk ez dira guregana osorik heldu, besteak beste, orriak apurturik daudelako. Halakoetan, hutsunea dagoen kasuetan *[…]* ikurra jarri dugu eta, hitza edo esaldia osatu edo interpretatu ahal izan dugun kasuetan, berreraikitako testua kortxete barruan eman dugu.

Bestalde, zenbait testuren edizio paleografikoa eskaini dugu, horietan jatorrizkoan dauden laburdurak osaturik eman ditugun arren, < > artean jarri dugu jatorrizkoan falta dena.

#### 2.1.8. Hutsak

Begi bistakoak dirudíten hutsak daudenetan, <*sic*> laburdura saihestu eta zuzendu egin ditugu eta aparatu kritikoan oharren bidez jakinarazi ditugu. Hutsa ote den zalantza badugu, testuan dagoen bezala mantendu dugu, dagokionean ohar bat eginez.

### 2.2. GOI-NAFARRERA ARKAIKO ETA ZAHARREKO TESTU LABURRAK

Azpiatal honetan ezagutzen ditugun goi-nafarreraz idatzitako testu laburrak bildu ditugu. Zaharrena xv. mendekoa da, eta berriena 1731koa. Gehienak prozesuetan agertzen diren esaldiak dira, zuzenean lekukoen ahotik jasoak. Lekukotasun horiek erromantzez, gehienetan gaztelaniaz, idatzitako testuetan daude. Badira, hala ere, interes linguistiko, kultural, sozial eta etnografikoa duten bestelako testu llaburrak ere, hala nola ezkontza fedeak, bertsoak, koplak eta errefrauak. Horietarik asko eskuizkribuak dira, baina gutxi batzuk liburu argitaratuetan agertutako euskarazko testutxoak dira.

#### 2.2.1. Matxin Zalba eta Martin San Martinen arteko gutunak

Goi-nafarrera arkaikoan idatzitako lehen euskarazko testu ezaguna 1416koa da, eta Martin San Martin eta Matxin Zalbaren artean idatzitako gutunen parte da. Letrakera gotikoz idatziriko gutun horiek nafar erromantzez dauden arren, pasarte batzuk euskarazkoak dira.

Orotara bi gutun dira. Idoatek aurkitu zituen Nafarroako Artxibo Nagusiko Compto sekzioan —«Registro 339 de Tesorería, fol. 109. año 1415» erreferentzia eman zuen Idoatek—, eta 1969an argitaratu zituen testuaren transkripzioa eta faksimilea. Handik gutxira, Irigaraik (1970) irakurketa berria proposatu zuen, eta irakurketa horri atxiki zitzaion Sarasola (*ConTAV* § 4.2.1). Mitxelenak (1971b: 387, 20. oh.) testuaren ediziorik aurkeztu ez bazuen ere, zenbait zuzenketa proposatu zituen. Urte berean, Irigoienek eta Cierbidek (1971) testuaren euskarazko eta erromantzeko pasarteen transkribapena eta grafiaren, fonetikaren, morfologiaren eta lexikoaren azterketa egin zituzten.

Berriki, Lekarozek (2014b) gutun horiek aztertu ditu, eta Monteanok (2015) testuaren beste edizio bat eta azterketa paratu ditu. Saio horretan, besteak beste, erakutsi du testua 1416koa dela, ez 1415ekoa, orain arte uste zenaren kontra. Bestalde, gutunen deskribapen fisikoa ematen du:

> La carta bilingüe está escrita en una pieza de papel de 220 por 193 mm con filigrana o marca de agua común en la época. Escrito en letra gótica-cursiva minúscula, de innegable influencia francesa y típica de la Navarra de principios del siglo xv, el texto ocupa los dos tercios superiores del pliego, con un par de párrafos seguidos de sus correspondientes firmas. Carece de fecha cronológica y tópica, y tampoco tiene al dorso ningún remite. (Monteano 2015: 149)

Idoateren proposamenari jarraikiz, Monteanok euskarazko edukiari bezala, testua idatzi eta jaso zutenei ere ematen die garrantzia. Hori dela eta, Matxin Zalba eta Martin San Martin nor ziren ikertu du.

Aztergai ditugun testuok gorteko kontu ekonomiko bati buruzko bi gutun dira, paper berean idatziak. Lehena San Martinek idatzi zion Zalbari, eta bere erantzuna jasotzen du bigarren gutunak.

Martin San Martin 1380. urte inguruan jaio zen, San Martin Unxen ziurrenik. 1405ean Juana infanta oinordekoaren idazkari eta ekonomia administratzaile lanetan hasi zen. Infanta hiltzean, 1413an, bikario nagusiaren idazkari eta Iruñeko gotzainaren protonotario apostoliko izendatu zuten. 1415ean gortean Karlos III.a erregearen idazkari eta errege etxeko ekonomia administratzaile izendatu zuten, eta horretan aritu zen harik eta 1425ean erregea hil zen arte. Martin San Martin 1429an zendu zen. Bigarren gutuna Matxin Zalbak idatzi zuen, ofizialki Martin Sanchez Zalbakoa zen haren izena. 1390. urte inguruan jaio zela dirudi, Iruñean ziur asko, merkatari familia batean. 1407rako finantza-jasole lanetan aritu zen. 1413an erregearen notario eta Gorte Nagusiko eta *Comptos* Ganberako notario izendatu zuten. Urte berean, Karlos III.a erregearen aberastasunaren arduradun izendatu zuten. Lan horretan aritu zen 1446 inguruan hil zen arte.

Horrezaz landara, gutuna bere testuinguruan kokatzen du Monteanok (2015: 153-154):

> A mediados de julio de 1416, el colector de Ultrapuertos se dispone a abonar el primer pago de 141 libras en escudos de oro franceses. Es en este momento cuando creemos que Sant Per invocaría una rebaja fiscal que los de la villa de Donibane Garazi habían obtenido del rey poco antes. Efectivamente, a finales del año anterior la capital bajonavarra debió obtener de Carlos III una ayuda económica similar a la otorgada poco antes a la también villa bajonavarra de Bastida (La Bastide-Clairence). Entonces, considerando que sus murallas debían ser reparadas, el rey había concedido a esta última villa 70 florines de oro (equivalentes a 101 libras y media) para los años 1413 y 1414, cantidad que debía ser descontada de lo que pagaban por la imposición. Pese a que no hemos podido dar un documento similar que lo acredite, Donibane Garazi obtendría una remisión similar, con idéntico motivo y cantidad, para los años 1415 y 1416. Una *gracia* o concesión a las que habría que añadir otras dos remisiones que habían obtenido en septiembre de 1415 en el impuesto de cuarteles. Sería entonces, con el fin de corroborar la remisión invocada por Donibane Garazi, cuando, a mediados de julio de 1416, San Martín dirigiría a Zalba —que había encargado el año anterior de la recaudación de ese impuesto— la carta que nos ocupa.

Gutuna idatzi zuten garaian San Martin erregearen idazkaria zen, eta errege etxeko ekonomia administratzen zuen. Zalba, aldiz, Nafarroako diruzaina zen. Biak bizi ziren erregearen inguruan Erriberrin.

Egun gutuna Nafarroako Artxibo Nagusian dago, baina erreferentzia ez da arestian aipatu duguna, Idoatek (1969) emandakoa. Monteanok (2015: 149, 6. oh) dioenez, gaur egun «Documentos procedentes de la vitrina» funts kartografikoan dago (Depósito 6/2).

Testuaren zahartasuna dela eta, edizio kritikoaz gain paleografikoa ere paratu dugu, eta nafar erromantzezko laburdurak osatzeko Monteanoren edizioan oinarritu gara. Gure edizio hauek prestatzeko Monteanok berak bidali digun testuaren argazkia baliatu dugu. Edonola ere, beste argitaratzaileen edizioak kontuan izan ditugu: Idoate (Id), Irigarai (Ir), Cierbide & Irigoien (Ci&Ir), Sarasola (S) eta Monteano (M).

### *2.2.1.1. Testua*

#### *2.2.1.1.1. Edizio paleografikoa*

Machin s<einor> supplico vos q<ue> me imbiedes por esc<ri>pto quoanta es la gra<cia> q<ue> los de Sant Johan han d<e> la imposit<i>on Et jaunatiçula egun hon Et me imbiat adizir si berres al combit o non

El todo b<uest>ro M<ar>tin de Sant M<ar>tin

Seynnor maestre martin. Acome<n>do vos a Miguel Papon b<ie>n amic et seredes b<ie>n ayssa en casa de Peyre de Tors del bon baron q<ue> mal li se ffaga en <e>l coillon et escusat me de ~~conuit~~ combit que no<n> puedo ser q<ue> huespedes tiengo Et jaunatiçula abarion eznayz bildur ezten alla. Et jaquiçu done Johañ<n>e garaçicoec Dute gra<cia> eRegue baytaric[…] hurtean yruroguey ⁊ amavi ~~florin~~ florin hurtean baytator sey florin ⁊ t<er>tio bat ylean Rebatiçera colectoreari et alegraçaytec onguj.

Çure guçia, Machin de Çalua

#### *2.2.1.1.2. Edizio kritikoa*

Machín seinor, supplico vos que me imbiedes por escripto coánta es la gracia que los de Sant Johan han de la impositión. *Eta Jaunatiçula egun hon*. Et me imbiat a dizir si berres al combit o non.

El todo buestro Martín de Sant Martín

Seyñor maestre Martín: Acomendo vos a Miguel Papon bien amic. Et seredes bien ayssa en casa de Peyre de Tors del bon barón que mal li se faga en el coillón. Et escusatme de combit, que non puedo ser que huespedes tiengo.

Eta Jaunatiçula abari on; ez nayz bildur ezten alla. Eta, jaquiçu, Done Johanne Garaçicoec dute gracia erregue baytaric:[24] hurtean iruroguey eta[25] amavi florin, baytator sey florin eta tercio[26] bat ilean rebatiçera colectoreari. Eta alegra çayteç ongui.

Çure guçia, Machin de Çalva

### *2.2.1.2. Iruzkina*

Grafia aldetik aipatzea merezi du <h> grafemak: eskuizkribuan *hurtean* dator bi kasuetan eta *hon* behin. Lehen adibidean *u*-ren balio bokalikoa islatzeko izan daiteke; bigarrengoan, ziurrenik, espletiboa da. Bestalde, albokaria islatzeko <ll> erabiltzen du: *alla*.

---

[24] baytaric] jarraian tatxaturik hiru letra daude.

[25] eta] esk. <⁊> ikur tirondarra; cf. Mitxelena 1971, 20. oharra.

[26] tercio] esk. *ttio* laburduraz. Nolanahi ere, ez dago argi bigarren letra <t> ala <c> irakurri behar den: Id *tercio* : Ir *tercio* : Ci&Ir *t[er]tio* : S *t(er)tio* : M *tercio*.

Hizkuntza-ezaugarriei bagagozkie, bi aldiz agertzen da *jaunatiçula* adibidea. Bertan, kontsonanteen neutralizazioa aski indartsua dela ikus dezakegu: *-k* + *d-* > *-t-*. Gisa bereko asimilazio gehiago badira testuan: *-t* + *d-* > *-t-*, *baytator*, eta *-z* + *d-* > *-t-*, *ezten*. Bestalde, *f* > *b* egin da *abari* adibidean (*FHV* § 11.14); bestela, proposa liteke *-h-* > ø bilakabidea **wh*/*ßh* > *-f-* baino lehenago gertatu zela: **(g)au* + *hari* > **(g)auari* > *abari*.

Morfologiari dagokionez, ergatiboaren adibide bakarra dago, eta horretan pluraleko *-ek* aldaera agertzen da: *Done Johane Garacicoec dute gracia*. Halaber, bizidunen kasu markaren adibide bakarra dugu eta hor *baita-* forma dago, goi-nafarreraz lehen aldiz: *erregue baytaric*.

Indikatibokoak ez diren perifrasietan aditzoina erabiltzen da: *alegra çaiteç*. Bestalde, *izan* aditzaren hirugarren pertsonako aditzetan *da* + *-en* > *den* egin da: *ezten*. Horrezaz landa, *-te* pluralgilea dago **edun* aditzarekin: *dute*.

Lexikoan, arestian esan bezala, *abari* agertzen da; Nafarroan lehenago Foru Orokorrean ere lekukotzen da aldaera hori: *on bazendu avaria* (*TAV* § 2.2.13). Bestalde, *bildur* agertzen da, goi-nafarreraz lekukotzen den ohiko aldaera *beldur* izan arren. Gainera, zenbakiak egiteko mendebalde/erdialdeko egitura agertzen da: *iruroguey*.

Ikuspuntu soziolinguistikotik begiraturik, aipagarri da nafar gorteetako goi karguak dituzten bi handikiren arteko hizkuntza-harremana euskarazkoa dela; horretaz gehiago, ik. Lekaroz (2014b) eta, batez ere, Monteano (2015). Aldiz, ikuspuntu kulturaletik edo sozio-ekonomikotik merezi luke aipatzea *florin* txanponaren erabilera. Dirudienez, txanpon horren jatorria Florentzian dago 1252an, eta Erdi Aroan Europa osoan erabili zen. Aragoiko koroaren moneta ofiziala izan zen Petri IV.a Aragoikoaren garaiaz geroztik (Rueda Sabater 1984). Aragoiko erregearen imitazioz, eta txanpon horrek zuen prestigiogatik, Karlos II.ak urrezko florinen emisio txiki bat egin zuen (Lacarra 1975: 213-214).

Euskarazko testu zaharren artean badira txanpon horri erreferentzia egiten diotenak, besteak beste, 1619ko bertso iraingarrietan *Adarrac emaiten dira Miraballesen, / Dozena milla* ***florinen*** (*TAV* § 3.1.25) agertzen da eta Landuccik ere bere hiztegian «Florin de Florencia, *florin gorria*» aipatzen du.

### 2.2.2. Pater noster txikia

XV. mende hasierakoa bide den Pater noster txikia deritzon otoitz hau Iruñeko katedraleko liburutegian dago, 7. kodizeko 145v orrialdean. Kodize horrek Arnaldo Barbazangoaren —1318-1355 bitartean Iruñeko gotzaina— eskuizkribua biltzen du, eta amaieran dagoen orri batean esaldi solte batzuk daude. Zenbait hizkuntzatan idatzirik daude esaldi horiek, eta eskua ez da bera guztietan. Dirudienez, luma-probak egiteko idatzi zituzten.

Esaldi haien artean euskarazko otoitz bat dago, gotiko tankerako idazkera batean. Tamalez, eskuineko ertza ez da ongi irakurtzen, tinta erdi ezabaturik baitago eta orrialdearen ertza apurturik. Gifford eta Mitxelenak (1958) 1425. urtea baino lehenagokoa izan behar duela azpimarratu zuten, eskuidatzi horretan ematen den informazioan oinarriturik. Hain zuzen ere, *Carlos por la gra… Rey de Navarra Conde de Eureus* jartzen du, eta Evreux etxeko azken Karlos erregea 1425. urtera arte egon zen.

Gifford eta Molhok (1957) eman zuten lehenik ezagutzera otoitz hau; dena den, Fausto Arocenaren laguntza izan zuten testua irakurtzeko eta Mitxelenarena ohar lin-

guistikoak egiteko. Ondoren, Mitxelenak eta Giffordek (1958) hizkuntzari loturiko ohar batzuk egin zituzten. Azken lan horri hurrengo urtean beste zenbait ohar gehitu zizkion Mitxelenak (1959). Amaitzeko, *Textos arcaicos vascos* bilduman (§ 2.2.15) jaso zuen Mitxelenak. Hainbat urte geroago, Satrustegik (1991c) testuaren hizkuntzaz landako ohar batzuk egin zituen. Haren ustez, esaldi solteak dira, kopistak buruz ikasi ondoren idatziak:

> Yo diría que se trata, más bien, de frases sueltas y palabras inconexas que el escribano o el copista fue insertando a ritmo libre de memorización, sin más intención que la de dejar correr la pluma para su puesta a punto, con el resultado obvio de un galimatías. El problema estriba en ir situando las distintas referencias dentro del posible contexto original. (1991c: 80)

Dena dela, Satrustegik (1991c: 81) ohartarazten du esaldien artean badaudela ahozko tradizioko otoitzetan agertzen diren egiturak, eta zenbait otoitzekin konparatzen du. Hain zuzen ere, Mitxelenak (*TAV* § 2.2.15) dio Pater noster txikia deitzen zaion otoitz magiko bat dela, eta J. A. Donostiak jasotako antzeko otoitz batzuk aipatzen ditu: Berueten bildu zuen *Pater noster txikii, Jesus penitentzii. Lurrak dekar arogi, txotxak arduan gorrii* eta Luzaiden *Ave Maria xuria, bost penitentzia. Lurrak dakar ogia, xoxak ardan gorria*. Halaber, Azkuek Gipuzkoan jaso zuen beste adibide hau ere aipatu zuen Mitxelenak: *Pater noster txikia, lurrak dakar ogia, txotxak ardo txuria, Paradisuko gloria.*

Hona bi edizio dakartzagu: paleografikoa eta kritikoa. Bietarako jatorrizko eskuizkribua hartu dugu oinarri. Nolanahi ere, irakurtzen zailak diren pasarteak ulertzeko Mitxelenaren azken edizioa izan dugu lagungarri.

### *2.2.2.1. Testua*

#### *2.2.2.1.1. Edizio paleografikoa*

Vyrguo clemens Vyrguo pia Vyrguo dulçis al[…
todauja Pater noster chjcia deus peretençia lurac dac[ar] […
çoçac ardan bustia baradiçu menda uerde macuonac ard[…
liburuetan Iracurten Arguiçagnieraiçeten çeru[…
dauilça jangojcoaren […] apostru maestru jaun d[…
Agnus dei qui tollis peccata mundi egunean
telo meo guara delaçure guomendatu gura jruretan d[…
arima saluatu.

#### *2.2.2.1.2. Edizio kritikoa*

<145v>
Virgo clemens, Virgo pia, Virgo dulçis al[…
todavía. Pater noster chicia, Deus peretençia,[27] lurrac dac[ar] […
çoçac ardanbusti, baradiçu menda verde macu onac ard[…

27 perentencia] hirugarren <e> lerroartean.

liburuetan iracurten, arguiçagui[28] eraiçeten, çeru[a…
davilça[29] Jangoicoaren apostru[30] maestru jaun d[…
Agnus Dei qui tollis peccata mundi[31] egunean
telo meo garadela[32] çure gomendatu.[33] Gura iruretan d[…
arima salvatu.

*2.2.2.2. Iruzkina*

Testu honek bi arazo ditu nagusiki: lehena da eskuineko ertza ez dela ongi ikusten eta, ondorioz, hitz batzuk ezin direla osorik irakurri; bigarren arazoa da zati batzuetan ez dela argi ikusten idatzitakoa, denboraren poderioz tinta ezabatu delako.

Grafiaz den bezainbatean, <u> grafemak balio bokaliko eta kontsonantikoa ditu: *busti* eta *baradiçu* adibideetan bokala da, baina *uerde*, *dauilça* eta *saluatu* adibideetan balio kontsonantikoa du. Halaber, <j> grafemak balio bokalikoa eta kontsonantikoa ditu testuinguruaren arabera: balio bokalikoa du kontsonante artean badago edo hitz hasieran kontsonante aurretik agertzen bada: *chjcia*, *jruretan* adibideetan esate baterako. Hala ere, hitz hasieran bokal aurretik balio kontsonantikoa du: *jangoicoaren*. Bestalde, <c> grafemak beti herskaria islatzen du, baita <i>-ren aurrean dagoenean ere: *chicia*. Frikaria irudikatzeko <ç> erabiltzen du beti: *perentençia*, *arguiçagui*, *eraiçeten*.

Fonologia aldetik, aipagarri da hitz hasierako herskari ahostuna *baradiçu* hitzean. Horrezaz landara sinkopa dugu *apostru* adibidean; gainera, ikus daitekeenez, **apostoru* litzateke aldaera zaharra.

Morfologia aldetik, *gura* erakuslea agertzen da herskari ahostunarekin. Aditzei dagokienez, *iracurten* adibideak erakusten du *-te* erabiltzen zela, artean, aditz-izenak egiteko. Bestalde, *izan* aditzaren pluraleko lehen pertsonan *garadela* pleonastikoa dugu.

Lexiko aldetik, *perenteçia* 'penitentzia' aldaera dugu, *OEH*ren arabera adibide bakarra da Pater noster txiki honetan dagoena. Horrezaz gainera, *ardanbusti* hitz elkartua agertzen da, beste inon lekukotzen ez dena. Aipagarri da, halaber, *eraiçeten* 'irazeki, piztu' aditzaren aldaera. Aditz-izena zein den ikusita, **eraizen* izan liteke partizipioa.

### 2.2.3. Kondestablearen kopla

1493ko abenduan Iruñean agaramontarren eta beaumontarren artean egondako liskar baten karietara sortu zen ondoko kopla 1494ko urtarrilean. Hain zuzen ere, Leringo konde eta Nafarroako kondestableari eskainiz abestu zen Iruñean. Mitxelenak (*TAV* § 3.1.13) eman zuen koplaren sorreraren testuingurua:

---

28 arguiçagui] eskuizkribuan ez dago <u>, baizik eta <n> lerroartean.

29 davilça] hitza ez da garbi ikusten, eta badirudi <i> lerroartean dagoela <u>-ren gainean.

30 apostru] aurretik zerbait tatxaturik, <r> lerroartean.

31 Agnus Dei qui tollis peccata mundi] letra handixeagoz eta, dirudienez, beste esku batek idatzia.

32 garadela] esk. *guara delaçure*.

33 gomendatu] esk. *guomendatu*.

> Al llegar a Pamplona, a finales del año 1493, los reyes don Juan III y doña Catalina, acompañados de la princesa doña Margarita y de muchos nobles agramonteses y bearneses, hallaron cerradas las puertas de la capital por el bando beamontés, dirigido por el conde de Lerín, condestable de Navarra. Tras unas negociaciones, pudo hacerse sin disturbios la entrada y a continuación la coronación, que se celebró el 10 de enero de 1494.

Gertakaria eta kopla Francisco Alesónek (1634-1715) jaso zituen *Annales del reino de Navarra* (1684-1715) liburuaren jarraipenean; hain zuzen ere, 1715ean argia ikusi zuen 5. liburukiko VI. kapituluan agertzen da, 88. orrialdean. Zehazkiago, testu nagusiari egindako oin-ohar batean dator kopla, ondoan gaztelaniazko itzulpena duela. Alesónek dakarrenez, koroatzearen ondoren festa eta ospakizun handiak izan ziren, eta tartean euskarazko kopla kantatu zuten:

> A la coronación siguieron grandes fiestas y regocixos: y se quenta, que en una de las comedias, se representaron hubo, en sus interludios varios chistes con alusiones, que más eran para agrazar los ánimos que para endulzarlos, como fuera razon.

Guerrak (1924: 90-91) jaso zuen kopla eta, ondoren, Mitxelenak (*TAV* § 3.1.13). Nafarroako Liburutegi Digitalean ale bat ikus daiteke sarean, eta horixe erabili dugu gure edizioa prestatzeko.

### *2.2.3.1. Testua*

En uno destos interludios o entremeses se cantó esta copla en vascuenze, según refiere el autor de las memorias manuscritas.

| | |
|---|---|
| Labrit etá erregué | Labrit padre y rey hijo, |
| aytá-semé diráde, | si queréis acertarlo, |
| condestable jauná | al señor condestable |
| ar bizate anáie. | tomadle por hermano. |

### *2.2.3.2. Iruzkina*

Grafiari dagokionez, zenbait hitzek tileta dute, ziurrenik azentua markatzeko: *etá*, *erregué*, *aytá*, *semé*, *diráde*, *jauná*, *anáie*. Adibide horietan ikusten denez, azentua hitzaren bigarren silaban dago; salbuespena *erregué* da. Bestalde, ez da afrikatua markatzen: *bizate* 'bitzate'.

Fonologian ez dago ezer nabarmentzekorik. Aitzitik, morfologiaz den bezainbatez, *izan* aditzaren hirugarren pertsona pluralean *dirade* pleonastikoa agertzen da. Bestalde, indikatiboaz landako perifrasietan aditzoina dago: *ar bizate*.

Aldaera lexikoen artean, *anáie* dugu, bukaerako *-e*-rekin. *OEH*ren arabera Erdi Arorako aldaera hori agertzen da eta, besteak beste, Leizarragak aldaera hori darabil.

Mitxelenak (*TAV* § 3.1.13) ohartarazi bezala, Alesónek dakarren gaztelaniazko itzulpena ez da hitzez hitzekoa, eta ondoko itzulpena eman zuen Mitxelenak: «Labrit y el Rey son padre e hijo: tomen por hermano al señor Condestable».

### 2.2.4. Arnold von Harffen hiztegia

Arnold von Harff (1471-1505) zaldun koloniarrak erromesaldia egin zuen 1496-1499. urte bitartean. Bidaia horretan Jerusalema, Erromara eta Santiago de Compostelara joan zen, besteak beste (cf. Letts 1946; Brall-Tuchel & Reichert 2007). Santiagora bidean, Euskal Herritik pasatu zen; zehazkiago esanda, Nafarroa Beherea eta Garaia zeharkatu zituen: Donapaleu, Oztibarre, Donibane Garazi, Auritz, Larrasoaña, Iruñea, Gares, Lizarra, Los Arcos eta Viana, eta handik Logroñora joan zen. Santiagotik bueltan ere, Euskal Herritik pasatu zen berriro, baina ez zen Nafarroan sartu; itzuleran Araba, Gipuzkoa eta Lapurdi zeharkatu zituen (Gavel 1922: 581-585).

Von Harffek bere bidaiaren memoria eskuizkribaturik utzi zuen, eta bertan ezagututako gauza eta animalia exotikoak irudikatu zituen grabatuetan (Gavel 1922: 382). Bisitatutako herrialdeetako hizkuntzez eta idazkerez interesa zeukanez, horien berri eman zuen: grezieraren, arabieraren eta hebreeraren alfabetoak jaso zituen. Horiezaz landara, Von Harffek bere irakurleentzat ezezagunak ziratekeen hizkuntzen hiztegiak ere egin zituen, oinarrizko hitzez osatuta eta ahoskatzen ziren bezala idatzita (*ibid.*). Mende batzuk lehenago Aimery Picaudek egin zuen antzera, Von Harffek bidaiaren kronika bat idatzi zuen, Santiagora bidean Euskal Herritik igarotzean. Kronika horretan, igaro zituen herriak zerrendatu eta bertako jendeez ari dela, Von Harffek dio idazten zaila den hizkuntza bat dagoela Euskal Herrian. Halere, hitz eskutada bat jaso zuen eta, horrela, euskara-alemaniera hiztegi labur bat osatu zuen, euskaraz ohikoak ziren hitz eta esaldiak jasoz. Picaudek idatzitako hiztegitxoarekin batera, ezagutzen dugun euskarazko hitz zerrenda zaharrena da.

Eskuizkribua osorik lehendabizikoz 1860an argitaratu zuen E. von Grottek *Die Pilgerfahrt des Ritters Arnold von Harff von Cöln durch Italien, Syrien, Aegypten, Arabien, Aethiopien, Nubien, Palästina, die Türkei, Frankreich und Spanien, wie er sie in den Jahren 1496 bis 1499 vollendet beschrieben und durch Zeichnungen erläutert hat* liburuan. Bertan, 227. orrian dator Von Harffek jasotako hitz zerrenda eta, kontuan izanda, Iruñeaz diharduenean, Gendulaina joan aurretik, sartzen duela hiztegitxoa, pentsa daiteke iruindarra zela informatzailea, edo hitzok Iruñean jaso zituela bederen. Hamarkada batzuk geroago Vinsonek (1892), Linschmannek ohartarazirik, euskarazko hiztegia jaso zuen, hizkuntzari zegozkion ohar batzuekin. Zenbait urteren ondoren, Gavelek (1922: 452-453) koloniarraren lana aztertu eta kronikan Euskal Herriari dagokion zati osoa, euskarazko hiztegia barne, argitaratu zuen frantsesezko itzulpenarekin eta hizkuntza azterketarekin. Hamarkada bat geroago, Garatek (1931) hiztegiko pasarte ilun baten interpretazio berria plazaratu zuen, eta ohar batzuk egin zizkion Gavelen irakurketari. Hainbat urteren ondoren, Mitxelenak (*TAV* § 2.2.18) berriro argitaratu zuen testua, eta azterketa eta ohar berriak egin zituen. Monteanok (2017: 20-23) iruzkin bat egiten du Von Harffen bidaialdiaz eta bi irudi ematen ditu Oxfordeko unibertsitateko Boelian Library-n aurkitutako XVI. mendeko lehen erdialdeko kopia batetik atereak: batean, dama bat eta neskame bat agertzen dira, garaiko ohiko janzkerarekin; bestean, hiztegitxoa agertzen da.

Hona dakargun edizioa paleografikoa da, egilea atzerritarra zenez, erabili zuen idazkera sistema bereziak zaildu egiten baitu interpretazioa. Gainera, eskuizkribua zu-

zenean ikusi ez dugunez, ez dakigu Grootek beti zuzen irakurri ote zuen Von Harffek idatzitakoa eta testuak dituen berezitasun grafiko batzuk ez ote diren Grootenak. Beraz, 1860ko argitalpenean oinarritu eta bertako sistemari jarraitu diogu. Euskarazko hiztegia liburuko 227. orrialdean dago, eta sarean ikus daiteke osorik.[34]

### *2.2.4.1. Testua*

Item in Pascayen hauen sij eyn eygen spraich die gar buese zo schrijuen is, der ich etzliche woert behalden hane, as hij vnden geschreuen steyt.[35]

**Pascaysche spraich**

| | | |
|---|---|---|
| Item ogea | broyt | |
| arduwa | wijn | |
| oyra | wasser | |
| aragi | fleysch | |
| gasta | keyss | |
| gaza | saltz | |
| oluwa | hauer | |
| huetza | stroe | |
| norda | | wer is dae |
| schambat | | wat gilt dat |
| hytzokosanma | | eyn wirt |
| gangon dissila | | got gheue dir guden morgen |
| schatuwa ne tu so gausa moissa | | schoin junfrau kumpt bij mich slaeffen |

zo tzellen

| | |
|---|---|
| bat | eyn |
| bij | tzewey |
| yron | drij |
| lae | vier |
| boss | vunff |
| see | sees |
| sespe | seuen |
| trortzey | acht |
| wedeatzey | nuyn |
| hammer | tzien |

[34] Google Books atarian dago eskuragarri: https://books.google.es/books?id=WktCAAAAcAAJ&printsec=frontcover&source=gbs_ge_summary_r&cad=0%22%20\l%20%22v=onepage&q&f=false#v=onepage&q&f=false

[35] Hauxe da Gavelek (1922) frantsesez emandako itzulpena: «Item au pays basque ils ont une langue particulière qui est très difficule à écrire, [et] dont j'ai retenu quelques mots, comme il est écrit cidessous».

### *2.2.4.2. Iruzkina*

Von Harffen hiztegia iruzkintzerakoan, kontuan izan behar dugu alemanaren grafia eta fonologia aintzat hartuta transkribatu zituela euskarazko ordainak, eta Von Harffen eskuizkribuan oinarriturik Grootek egindako edizioan hutsak egon daitezkeela. Hori dela eta, zaila da zenbait itzulpen eta egokitzapen interpretatzea. Hain zuzen ere, Gavelek (1922: 452, 34 oin-oharra) erreferentzia egiten dio Von Harffek hitz zerrendaren aurretik dioen ideiari; alegia, euskara ez zatekeen idazteko gaztelania edo gaskoia baino zailagoa, izatekotan, transkribatzeko orduan da euskara beste hizkuntzak baino gaitzagoa. Izan ere, gaztelania eta gaskoia jakin ez arren, etimologia latindarragatik eta idazteko ohiturengatik zuzenago idatz zitzakeen Von Harffek hizkuntza horietatik hartutako hitzak, baina euskaraz ez zuen halako aukerarik izan. Testu honek dituen interpretazio zailtasunak direla kausa, Vinsonek (1892), Gavelek (1922), Garatek (1931) eta Mitxelenak (*TAV* § 2.2.18) egindako ohar eta interpretazioak kontuan izango ditugu.

Zailtasunen artean, *huetza* 'strobe' aipa daiteke. Vinsonek eta, ondoren, Gavelek *hiatzea* ulertu zuten (< *hiratzea* 'iratzea' eta < *hiretzea* 'idem', hurrenez hurren). Mitxelenak, ordea, 'ohatze' interpretatu zuen. Patxi Salaberrik ohartarazi digunez, beste aukera bat da 'ahotza' izatea, alemanez 'Stroh'.

*Hytzokosanma* 'etxeko jauna' dela dirudi, Gavelen eta Mitxelenaren proposamena jarraituz. Interpretazioa zuzena bada, *itxe* aldaera dugu, eta horri esker, gutxi gorabehera muga dezakegu hiztegia osatu zuen eremua, Iruñetik hegoaldera ez baita aldaera hori agertzen. Bestalde, *-sanma* 'jauna' gisa ulertu behar da; zalantzarik gabe, <n> *pro* <u> kasu hau ez da Von Harffek transkribatzean egindako hutsa, baizik eta Grootek eskuizkribua irakurtzea egindako hutsa. Hitzaren adiera dela eta, Mitxelenak hauxe dio: «'un ventero, posadero' o bien 'huésped', en el sentido ya anticuado de 'el que hospeda, anfitrión'».

*Gangon dissila* egituran, azken hitza 'dizula' gisa ulertzeko arazo handirik ez dago, baina *gangon* zer den jakitea ez da aise. Vinsonek 'egun on' edo 'gau on' interpretatzen du; Gavelek bide beretik jotzen du, baina proposamenean urrunago doa, eta dio *gangoac egun* edo *gau on dizula* idatzi nahi zukeela, baina tarteko silabak falta direla. Mitxelenak Vinsonen hipotesiari heldu eta «(*Jainkoak*) *egun* (o *gau*?) *on dizula*» dela dio.

Zalantzarik gabe, testu horrekin aritu direnen artean buruhauste gehien eragin duena azken esaldia izan da: *schatuwa ne tu so gausa moissa*. Lehen hitzarekin guztiak bat datoz eta *neskatua* irakurtzen dute. Alabaina esaldia bere osotasunean Vinsonek 'neskatua eneki lo'gitea nauzu' interpretatzen du. Mitxelenak ere *ne tu so* 'nahi duzu' izan daitekeela proposatzen du. Halaber, *gausa moissa*-rekin eztabaida dago. Gavelek 'gauza motza' interpretatzen du, eta hipotesi horren alde egiten du Garatek. Hain zuzen ere, urrunago doa Garate eta dio euskaraz *motz* 'alu' esanahiarekin lekukotzen dela. Mitxelenak, aitzitik, hitzaren beste banaketa bat proposatzen du, alegia, *gausam oissa*; hala, lehena *gautzan* 'etzan gaitezen' edo *goazen* 'joan gaitezen' genuke; *oissa*, ordea, ilunagoa da, eta 'ohean, ohera' edo 'batera' adiera proposatzea ausartegitzat jotzen du Mitxelenak.

Zailtasunak zailtasun, fonologia aldetik badirudi *oa* > *ua* bilakabidea gertatzen dela: *arduwa* 'ardua', *oluwa* 'olua', *schatuwa* 'neskatua'. Bestalde, **j-* zaharra sabaiau-

rrekoa izan litekeela dirudi, <s> grafemaren interpretazioaren arabera: *hytzekosanma*. Ez dirudi hasperena dagoenik: *aragi*, *ne* 'nahi'.

Testuak hizkuntza-ezaugarri bereizgarri gutxi dituen arren, badirudi, Mitxelenak proposatu bezala, Nafarroa Garaian jaso zituela hitzok, eta ez Nafarroa Beherean. Dialektalki, baieztapen horren alde egiten dute *gasta* eta *arduwa* hitzak agertzeak, eta ez iparralderago erabiltzen diren *gasna* eta *arnoa*. Bestalde, goraxeago aipatu dugunez, *itxe* aldaera agertzen bada testua, horrek adieraz lezake Von Harffek izan zuen informatzailea Nafarroako iparraldekoa zela.

### 2.2.5. *Breviarium*eko hilabete izenak

Fernando Baquedanok *Breviarium secundum consuetudinem ecclesie et diocesis pampilonense* idatzi zuen, eta 1501. urtea baino lehen argitaratu zuen Iruñean Arnaut Gilen Brocariok. Liburua dela eta, halaxe dio Mosquerak (1977: 211):

> Breviarium secundum consuetudinem ecclesie et diocesis pampilonense. Tamaño 4.º Se conoce un solo ejemplar en la Biblioteca de la Catedral de Pamplona, que describimos: falta la portada, tiene 461 hojas a dos columnas sin numeración, al final faltan algunas hojas en donde nos figuramos tendría el colofón con la fecha. En cuanto al impresor no hay duda puesto que los tipos son innegables y en lo referente al año podemos deducir que fue impreso antes de 1501.

Ez dakigu zehatz zein urtetan atera zen liburua, baina arestiko aipuan Mosquerak dio 1501 baino lehenagokoa dela, eta aurrerago (Mosquera 1977: 213) 1500. urtea ematen du, zalantzarekin.

Otoitz-liburu horretako *unicum*ean, Iruñeko katedralean dagoenean hain zuzen ere, euskarazko hilabeteen izenak ageri dira eskuz idatzirik latinezko bakoitzari dagokion lekuan.

Satrustegik (1981) eman zuen zerrenda ezagutzera, eta ondoren berriro jaso zuen *Euskal testu zaharrak I* (1987) bilduman. Satrustegik edizioa prestatzeko Iruñeko katedraleko liburutegian dagoen alea bera erabili zuen; gu bertako liburuzainarekin izan gara eta ez dugu liburua aurkitu. Dena dela, Zulaikak (2011) euskarazko hilabete izenak aztertzean, *breviarium*ekoak ere kontuan hartzen ditu. Lan horretarako Zulaikak jatorrizkoaren irudiak erabili ditu, eta berak guri utzitako argazkiekin eta Satrustegik emandako irakurketekin osatu dugu gure edizioa.

Orotara, euskaraz hamar hilabeteren izenak datoz, uztailaren eta abuztuaren ordainak falta baitira. Abendukoak ere ez du euskarazko ordainik, baina azarokoan tatxaturik *avendua* agertzen denez, gure zerrendan, dagokion lekuan, sartu dugu. Euskarazko hilabete izenekin batera, liburuan dauden latinezko ordainak ere eman ditugu.

*2.2.5.1. Testua*

| | | | |
|---|---|---|---|
| içozilla: | januarius | garagarrilla:[38] | junius |
| oçalla: | februarius | urrilla: | september |
| marchoa: | martius | laztalla: | october |
| aprilla:[36] | aprilis | açaroa:[39] | nouember |
| mayaça:[37] | mayus | avendua: | december. |

*2.2.5.2. Iruzkina*

Fonologi aldetik, *i* bokalak eta bokalerdiak albokaria sabaikaritzen dute *yçozilla*, *oçalla*, *aprilla*, *garagarrilla* eta *urrilla* adibideek erakusten duten bezala.

Lexiko aldetik, Satrustegik (1981: 79) dioenez, *urrilla* eta *laztalla* erabiltzen dira, oraindik ere, Burundan eta Nafarroako beste leku batzuetan 'iraila' eta 'urria' adierazteko, hurrenez hurren. *Içozil* 'urtarril' adierarekin ohikoa da Nafarroan (ik. *OEH*, s.v. *izotzil*). *Garagarrilla* 'ekain' adierarekin erabiltzen da; *OEH*ren arabera (s.v. *garagarril*), adiera hori da ohikoa Nafarroan eta Gipuzkoan, eta 'uztail' Bizkaian. Dena den, irakurketa zein den, *garagarzil* ere izan liteke. Orokorrak dira gainerako hilabeteen izenak.

### 2.2.6. Etxalekuko bertsoa

Euskaraz kantatutako bertso hau Imozko Etxalekun asmatutakoa da, eta ziribertsoa da, 1491n Maria Iturburukok bereak ziren Etxalekuko jauregia eta dorrea Uharte Arakilgo Filipe Beamonti saldu zizkiolako egina. Maria Iturburuko, alargundu ondoren, Martitxo Musu morroiarekin —auziko lekuko batzuek «lacayo» gaitzizenaz deitzen diote— ezkondua zen. Eratsungo gizon batek auzitara eraman zuen Maria, jauregi eta dorrea bereak zirela esanez. Auziagatik, eta diru larritasunek hartaraturik, Maria Iturburukok jauregia eta dorrea saldu behar izan zituen, Martitxoren onespenarekin. Tratuan sartu omen zen, baina, Maria Uharte Arakilera aldatu behar zela, Filiperekin bizitzera. Egoera horrexek eraginda ondu zituen Etxalekuko jendeak testu honetako bertsoak, eta erromantzez idatzitako auzi-paperetan txertatu ziren Maria Iribarren lekukoaren adierazpenen barruan. Egoera horrek eraginda ondu zituen Etxalekuko jendeak testu honetako bertsoak.

Pertsonen duintasuna edo ohorea zikintzen duten gisa honetako kopla edo ziri-bertsoak ez dira horren ezezagunak euskal tradizioan. Horien artean ezagunetan 1619an idatzi ziren Tolosako bertso iraingarriak izan litezke (*TAV* § 3.1.25), baina badira gehiago, Urkizuk gogorarazten duenez (2009: 433-434).

Urrizolak (2007a: 63, 7. oin-oharra) dakarrenez, bertso hau da Nafarroako gertakari bati erreferentzia egiten dion euskarazko kantu zaharrena, Alesónek jasotakoa baino bizpahiru urte lehenagokoa baita. Halaber, dokumentua bera ere euskal kantu

---

36 aprilla] badirudi aurretik zerbait datorrela, baina ez da argi ikusten argazkian. Satrustegik *oriaro* edo *ostaro* irakurtzen du. Halere, *ostaro* hitzak 'maiatz' esan nahi du, ez 'apiril'.

37 mayaça] aurretik zerbait idatzia dagoela dirudi, baina ezin dugu jakin zer den.

38 garagarrilla] esk. *garaguarrilla* : Sat. *garaguarçilla*. Hirugarren <r>-aren azpian marka bat dago, eta <ç>-ren buztantzat har liteke; hala ere, gainerako <ç>-en aldean ezberdina da. Orrialde berean beste esku batez idatzia *gaengarzila* ere badago.

39 açaroa] esk. *acaroa*; aurretik *auendua* tatxaturik.

bat jasotzen duen zaharrena dateke; izan ere, ezagutzen diren hurrengo kantu zaharrak Garibairen lanetan eta Ibaguen-Cachopin kronikan geroago jaso ziren.

Hain zuzen ere, bertso hau 1541 eta 1546 bitartean idatzitako auzi-agiri batean dago. Nafarroako Artxibategi Nagusian gordetzen da, 197.511 prozesuko 13r folioan. Urrizolak (2007a) eta Maiorak (2011: 37) eman dute argitara, lehenak argazkiarekin. Guk geuk beste zenbait bertso eta koplarekin ere jaso dugu lekukotasun hau (Reguero argitaratzear-2).

Urrizolak (2007a: 61) 1491 inguruan datatzen du koplari dagokion gertakaria, baina, esan bezala, lekukoen adierazpenak 1541-1546 bitartean jaso ziren. Beraz, bertsoa ziurrenik 1491 inguruan sortu bazen ere, XVI. mendearen erdialdean jasotakoa da. Maiorak (2011: 37) 1545eko data ematen dio idatziari.

Eskuizkribuan kopla osoa jarraian idatzita dago, bertso-lerroetan banatu gabe. Edizio honetan lerroak bereizi eta horiexek zenbakitu ditugu. Bertsoak metrika irregularra bide du: 8- / 6a / 7- / 6a / 8a / 6a.

Gure edizioa prestatzeko jatorrizko testua baliatu eta Urrizolak (U) eta Maiorak (M) aurkeztutako edizioak ere kontuan izan ditugu.

### 2.2.6.1. *Testua*

> <12v> …a cabo de pocos días, bió este testigo al dicho don Filipe de Beamont en el dicho lugar de Echalecu, en el dicho palacio y torre. Y llebó a la dicha María de Yturrburua, según dezían, para la dicha villa de Huart de la bal de Araquil. Y el dicho Marticho Mussu, su marido, se fue adonde pudo. Y, como assí se dixo y se fue el dicho Marticho Mussu, llevantaron y pussieron una copla al dicho Marticho Mucho en bascoence, deziendo ansí:

<13r> Ançareac[40] oyna xabal,
buztayna laburco.[41]
Norc berea demana
beti da bellaco.
Marticho Mussu da alaco,[42]
eta ala caynezco.

### 2.2.6.2. *Iruzkina*

Grafiari begiraturik, aipagarri izan daiteke, <o> aurretik dagoen herskaria adierazteko <c> erabiltzen bada ere —*laburco* (2), *bellaco* (4)—, kasu batean <qu> erabiltzen dela: *alaco* (5). Bestalde, <c> *pro* <ç> dugu kasu ziur batean eta zalantzazko beste batean: *ancareac* (1) eta *caynezco* (6), hurrenez hurren.

Fonologia aldetik, nabarmentzekoa da *xabal* (1) adibidean daukagun sabaikaritze adierazgarria, baina ezin dugu zehatz jakin <yn> digrafoak asimilaziozko sabaikaritzea islatzen ote duen *oyna* (1), *buztayna* (2) eta *caynezco* (6) adibideetan.

---

40 Ançareac] esk. *ancareac*.
41 laburco] esk. *laburco* : U *labura* : M *laburco*.
42 alaco] esk. *alaquo*.

Ezaugarri morfologikoen artean, izenen kasuan txikigarriak egiteko *-co* erabiltzen da: *laburco*. Aditz morfologiari dagokionez, merezi du *demana* (3) 'ematen duena' adizkia aipatzea. Urrizolak (2007a: 63) «zailtasunak» dituen aditz formatzat badakar ere, *eman* aditzaren orainaldiko forma trinkoa da, erlatibozko perpausean txertatua.

Bestalde, lexiko aldetik goi-nafarrerazkoa den *ançareac* (1) agertzen da; aldaera bera ikus dezakegu, esaterako, ondoko adibidean: *Gayzto andurra, nor ayz i? Gazto andur bat bayçic, ançare maynguequi goztacen aycenori* (Iruñea, 1563). Halaber, *buztayna* (2) aldaera agertzen da; lehenago, 1258an, *Don Pero uztayna* lekukotzen da eta, geroago, Landuccik ere aldaera hau dakar: «Cola de animal, *vuztayña*».

Azkenik, irakurtzeko arazorik ez badago ere, interpretatzeko arazoak sortu dizkigu azken hitzak: *caynezco* (6). Urrizolak (2007a: 63) «y aún más» bezala itzultzen du. Zalantzarik gabe <c> irakurtzen bada ere, hainbat autorek dakarten *gainezko* 'gehiegizko' formaren aldaera izan liteke, baina ezin dezakegu azaldu hasierako ahoskabea. Era berean, <ç> irakur liteke (ik. testuan bertan *ancareac* → *ançareac*) eta, ondorioz, *zainezko* izan; irakurketa hori proposatzen du Urkizuk (2009: 433). Bi interpretazioetan dira arazoak.

### 2.2.7. Ezkontza fedeak

Goi-nafarrera arkaikoko testuen artean ezagunak dira ezkontza fedeak. Jimeno Juríok (1997: 75, ik., halaber, Jimeno Aranguren 2015) azaltzen duenez, Erdi Aroan ezkontzeko bi bide zeuden, Elizakoa eta zibila. Hori hala izan zen harik eta 1563tik aurrera Trentoko Kontzilioaren aginduz bigarren horiek debekatu eta klandestinotzat hartu zituen arte. Geroztik, onartutako ezkontza bakarrak Elizakoak izan ziren.

Ezkontza zibil horiek administrazioaren begietan ofizialak zirenez, Trentoko Kontzilio aurretik bederen, agirietan jaso ziren ezkontideen eta lekukoen hitzak, haietariko batzuk euskaraz.

Ezbairik gabe gehiago izango ziren arren, goi-nafarreraz idatzita gorde zaizkigun ezkontza fedeak bederatzi dira: Uitzikoa (1506), Arizkurengoa (1535), Beorburukoa (1536), Utergakoa (1547), Olatzagutikoa (1548), Bakedaokoa (1550), Agoizkoa (1551), Zufikoa (1552) eta Espartzakoa (1556).

#### *2.2.7.1. Uitzi*

Ezagutzen dugun euskarazko ezkontza fede zaharrena 1506koa da, Larraungo Uitzin izan zen eta auzi-paper batzuetan agertzen da. Hiru pertsonari eragiten die gertakariak: Milia Leitzako Uitziko Martin Aranokorekin ezkondu zen, baina ohartu zen lehendik sekretuan Martin Juana Uitzikorekin ezkondua zegoela. Hori dela eta, salaketa jarri zuen Miliak Martinen aurka. Halere, Martinek aurreneko ezkontza baliogabea zela defendatu zuen. Halere, Miliak epaitegietara jo zuen bere ezkontza bidezkoa zela eta Elizaren bedeinkazioa zuela esanaz. Lekukoak ez datoz beti bat, eta horietarik bik, Juan Gorritikok eta Graziana Uitzikok, esan zituzten jarraian jaso ditugun euskarazko fedeak (Satrustegi 1992: 56). Epaileak, azkenik, ontzat eman zuen Martin Aranokoren eta Juana Uitzikoren arteko ezkontza hura (Satrustegi 1992: 58).

Lekukotasuna 1509an idatzitako latinezko agiri batean omen dago. Satrustegiren arabera (1992: 56), Iruñeko katedraleko artxiboko agiri batean dago: «Procesos. Huici. 1509» erreferentzia aipatu zuen Satrustegik, baina guk ezin izan dugu erreferentzia horrekin aurkitu, ezta katedraleko artxibozainarekin hitz eginda ere. Badaezpada, Elizbarrutiko artxiboan begiratu dugu, baina bertako katalogoan ere ez dugu ezer aurkitu. Ondorioz, Satrustegik (1992) emandako transkripzioak eta irudiak baliatu behar izan ditugu gure edizioa egiteko, berak eman baitzuen lehen aldiz ezagutzera.

Orotara lau esaldi dira. Lehen esaldia Juan Gorriti lekukoak eta bikotea ezkondu zuenak esan zuen. Bigarren esaldia eskribauak Juan Gorritiren adierazpenetik jaso bazuen ere, senargaiaren hitzak dira. Biak daude agiriko 4. orriaren ifrentzuan. Hirugarren eta laugarren esaldietan andregaiaren hitzak daude, baina Graziana Uitziren lekukotza da. Satrustegik (1992: 57) dioenez, Graziana Gorritikoa zen, eta bi maitaleen bitartekari izan zen. Agiriko 9. orriaren aurkian daude azken esaldi horiek.

### *2.2.7.1.1. Testua*

> (1) [...] Hic, Martie Arano, arçen duc Johana, presentean dagoenau,[43] eure emazteren? [...].
>
> (2) [...] Arçen dut neure semazteren Johana hau eta hon eta leyal nayçacan, ala[44] dudanas eta duquedanas[...].
>
> (3) [...] Bada, hic, Martin, arcen duc Johana hau eure semazteren? [...].
>
> (4) [...] Bay, ala mia fede, eta horren senarr hon eta leyal içateco. Ala ene fedea, ala ene fedea, ala ene fedea [...].

### *2.2.7.1.2. Iruzkina*

Grafiari dagokionez, testuan agertzen diren <h> batzuk espletiboak dira, *hon*-en bi adibideetan, esaterako. Halere, gainerakoetan badirudi hasperenaren arrastoa izan daitekeela, etimologikoki esperotako lekuan agertzen baita: *hic*, *hau*, *horren*. Ez dago, ordea, <h> *eure* adibidean. Halere, hasperena duten hizkera batzuetan *eure* agertzen da; esate baterako, Leizarragak *hire* : *eure* eta *hi* : *euror* txandaketak ditu (Mitxelena *FHV* § 11.6). Gainera, Mitxelenak (*FHV* § 11.6, 12. oharra) emandako **hi-haur-e* eta **hi-hor-e* etimologiak zuzenak badira, Grassmannen legearen arabera, ez genuke hitz hasieran hasperenik. Bestalde, behin bada ere, <gu> erabiltzen da <o> aurretik: *daguoenau*.

Morfologia aldetik, *eure* eta *neure* izenordain indartuak ditugu. Horrez gain, badirudi *dagoenau* adibidean artikulu hurbila dugula, gainerakoetan erakuslea *hau* baita. Instrumentalean apikaria agertzen da: *dudanas eta duquedanas*. Dena dela, Satrustegik (1992: 57) dioenez, agirian *fedez* agertzen da, bizkarkariarekin; beraz, bi aldaerak ditugu Uitzin. Bestalde, prolatiborako genitiboa hiru aldiz agertzen da: *arçen duc*

[43] dagoenau] esk *daguoenau*.

[44] nayçacan, ala] esk. *nayçaquanala*. Ez da erraza interpretatzen, ik. iruzkina.

*Johana presentean dagoen au eure emazteren*, *arcen dut neure emazteren* eta *arcen duc Johana eure emazteren*.

Aditz morfologiaz den bezainbatez, **edun* aditzaren erroa *-u-* da: *dut*, *duc*. Aditzez ari garela, interpretatzen arazok eragin ditu guk *nayçacan* eman dugun adizkiak. Satrustegik (1992: 59) *nayçacanala* hartu zuen adizkitzat; alegia, guk hautakaritzako juntagailutzat hartu duguna, Satrustegik konpletibo markatzat hartu eta iradoki zuen alokutibo femeninoa zela. Gure interpretazioa zuzena bada, *nayçacan* 'natzaion' subjuntiboa genuke: 'hartzen dut neure emaztetzat, on eta leial izan natzaion, ala dudanaz eta izango dudanaz'. *Naitzaikan* beste inon aurkitu ez badugu ere, *natzaiko* 'natzaio' dakar Otxoa Arinek, eta atzizkia gehitzean eratorpen legearekin *o* > *a* egiten da.[45] Beriainek *nayçayo* dakar, datiboko *-o*-rekin, baina *ai* diptongoarekin, eta diptongoa dakar Zigako 1576 *nayçaye* adibideak ere. Aditzarekin amaitzeko, geroaldi trinkoa agertzen da: *duquedanas*.

Sintaxi gaietan, *eure* eta *neure* izenordainen erabilera bat dator Linschmann-Aresti legearekin: *Arçen dut neure semazteren*.

Lexiko aldetik, *semazte* agertzen da, *emazte*-rekin batean. Ez da irakurtzeko eragozpenik, eta ez dirudi hutsa denik, eskribauak bi lekukoren ahotik jaso baitzuen hitz bera. Hala ere, ez dugu ezagutzen aldaera horren beste lekukotasunik.

### *2.2.7.2. Arizkuren*

Artzibarko Arizkurengoa da lekukoturik daukagun bigarren ezkontza fedea. 1535ean Katalina Arizkurengoren eta Martin Jasokoren artean auzia izan zen. Azken horrek Katalina, ustez haren emaztea, salatu zuen, baina emakumeak ukatu egiten zuen egozten zitzaizkion ezkontza fedeen balioa.

Egun lekukotasuna jasotzen duen 1537ko agiria Iruñeko Elizbarrutiko artxiboan dago jasorik C. 42, n. 14 erreferentziarekin, 35v orrialdean.

Satrustegik (1992) eman zuen testua ezagutzera, baina faksimilerik gabe. Guk jatorrizkoa ikusteko aukera izan dugu, eta bertan oinarritu gara testuaren edizioa egiteko. Dena den, Satrustegirena (S) kontuan hartu dugu.

Guztira hiru esaldi dira, eta orrialde berean daude. Hirurak dira senarraren ahotik hartutako adierazpenak. Antza denez, bi aldiz eman zuten ezkontzeko hitza; bigarren eta hirugarren esaldiak bigarren hitz-emate hartakoak dira, baina Katalina ustezko emaztegaiak ukatu egiten du hori esan zuenik. Hortik aurrera agiria latinez dago.

#### *2.2.7.2.1. Testua*

> (1) [...] Nic prometacen[46] derauçut ez secula çuri[47] faltaceco eta çuçaz[48] verce emazteric[49] ez eguiteco [...].

---

[45] Egiari zor, Ricardo Gómezi esker egin dugu interpretazioa.

[46] prometacen] esk. *prometacē*.

[47] çuri] esk. *curi*.

[48] çuçaz] esk. *cuçaz* edo *çucaz*, buztana zein <ç>-ri dagokion ez baitago garbi.

[49] emazteric] azken hizkiak ez dira ondo ikusten.

(2) [...] Nic prometacen[50] derauçut[51] neure fedea çuçaz[52] verce emazteric vici naycen artean[53] ez eguiteco[54] [...].

(3) [...] Nic prometacen[55] derauçut[56] neure fedea çuçaz[57] verce senarric vici naycen artean[58] ez eguiteco[59] [...].

### *2.2.7.2.2. Iruzkina*

Grafiaz den bezainbatez, maiz <c> *pro* <ç> dugu: *curi*, *deraucut*, *cuçaz*.

Fonologia aldetik, *-r(t)z-* multzoa agertzen da, *verce* adibideak erakusten duenez. Morfologia aldetik, *neure* izenordain indartua dugu, eta Linschmann-Aresti betetzen du: *Nic prometacen derauçut neure fedea*. Instrumentalean aldaera bizkarkaria da hiru adibideetan: *çuçaz*. Gainera, izenordainaren kasuan, *-zaz* erabiltzen da: *çuçaz*. Aditzaz den bezainbatez, **eradun* laguntzailea erabiltzen da NOR-NORI-NORK sailean, sinkoparik gabe: *prometacen derauçut*.

### *2.2.7.3. Beorburu*

1536an Txulapaingo Beorburun auzia eragin zuen ezkontza fede batek. Kasu hartan, hamarkada bat lehenago, 1527an, izandako euskarazko ezkontza fede bat dela-eta piztu zen eztabaida. Satrustegik (1981: 79-80) azaltzen duenez, Maria Beorburukok jarri zuen salaketa Martin Beltzuntzeren aurka, honek Mariari emandako ezkontzeko hitza ez betetzeagatik. Gainera, Martin beste emakume batekin ezkondu zen Elizaz, Beraskoaingo Maria Arraitzarekin, alegia. Epaia emaztearen aldekoa izan zen, eta Martinen bigarren ezkontza ezeztatu zuen.

Prozesua osorik latinez idatzirik dago, eta Maria Beorburukoaren euskarazko lekukotzak jasotzen ditu. Lekukotasuna jasotzen duen agiria Iruñeko Elizbarrutiko artxiboan dago gaur; C42 15 zk. erreferentzia darama eta 10r, 10v, 12r, 17v, 19r, 19v eta 21r orrialdeetan agertzen dira euskarazko esaldiak. Satrustegik (1981: 79-85, 1987: 20-21) eman zuen ezagutzera. Elizbarrutiko originala ikusteko aukera izan dugu eta bertan oinarritu gara gure edizioa egiteko.

Denera, 10 esaldi dira. Lehen hiru esaldiak senar-emazteen adierazpenak dira, eta prozesuan bertan daude jasorik. Gainerako ezkontza fedeak prozesuari jarraitzen dion adierazpenean agertzen dira. Bertan prozesuan agertzen diren esaldiak kopiatu dira, baina zenbait aldaketa eta zuzenketarekin, iruzkinean ikusiko dugunez. Hori dela eta, Satrustegik (1981: 85) dio kopiatu zuen idazkariak euskara ezagutzen zuela.

---

[50] prometacen] esk. *prometacē*; beltzune bat dago *-ta*-ren gainean.
[51] derauçut] esk. *deraucut*.
[52] çuçaz] aurretik tatxaturik *verce emaz*.
[53] artean] esk. *arteā*.
[54] eguiteco] esk. *egujteco* : S *agujteco*.
[55] prometacen] esk. *pmetacē*.
[56] deraçut] esk. *deraucut*.
[57] çuçaz] esk. *cuçaz*.
[58] artean] aurretik *art* tatxaturik.
[59] eguiteco] esk. *egujteco* : S *agujteco*.

### *2.2.7.3.1. Testua*

**Prozesua**

(1) […] <10r> Nic, Martin, ematen derauçut[60] neure fedea çuri,[61] Maria, vici naicen artean çuçaz verce emazteric ez eguiteco[62] eta ez çuri[63] vici naicen artean faltaceco […].

(2) […] Nic, Maria, çuri,[64] Martin, ematen derauçut[65] ene fedea vici naicen artean çuçaz verce senarric[66] ez eguiteco[67] eta[68] çuri ez faltaceco […].

(3) […] <10v> Nic, Martin, çuri, Maria, ematen derauçut neure fedea çuçaz verce emazteric ez eguiteco […].

**Prozesu-adierazpena**

(1') […] <12r> Nic, Martin, ematen derauçut neure fedea çuri, Maria, viçi naiçan artean çuçaz verce emazteric ez eguiteco eta ez çuri viçi naiçan artean faltaçeco […].

(2') […] Nic, Maria, çuri, Martin, ematen derauçut neure fedea çuri, Martin, viçi naiçan artean çuçaz verce senarric ez eguiteco […].

(3') […] <17v> Nic, Martin, çuri,[69] Maria, ematen[70] derauçut[71] neure fedea çure[72] senar içaiteco[73] […].

(4') […] Nic, Maria, ematen[74] derauçut çuri,[75] Martin,[76] neure fedea çure[77] emazte[78] içaiteco […].

(5') […] <19r> Nic, Martin, çuri,[79] Maria, ematen <19v> derauçut[80] neure fedea çuçaz verce emazteric vici naycen artean[81] ez eguiteco[82] eta ez çuri[83] faltaceco […].

---

[60] derauçut] esk. *deraucut*.

[61] çuri] esk. *curi*.

[62] eguiteco] esk. *egujtegujteco*; duplografia. Hitz-emate honen gainerako kopietan *eguiteco* agertzen da; besteak beste, aldaketa hori aintzat hartzen du Satrustegik (1981) eskribaua euskalduna zela pentsatzeko.

[63] çuri] esk. *curi*.

[64] çuri] esk. *curi*.

[65] derauçut] esk. *deraucut*.

[66] senarric] esk. *senaric*.

[67] eguiteco] aurretik *egujtego* tatxaturik.

[68] eta] esk. *et*.

[69] çuri] esk. *curi*.

[70] ematen] esk. *ematē*.

[71] derauçut] esk. *deraucut*.

[72] çure] esk. *cure*.

[73] içaiteco] esk. *icaiteco*.

[74] ematen] esk. *ematē*.

[75] çuri] esk. *curi*.

[76] Martin] esk. *Martî*.

[77] çure] esk. *cure*.

[78] emazte] hitzak amaieran <s> bat du tatxaturik.

[79] çuri] esk. *curi*.

[80] derauçut] esk. *deraucut*.

[81] artean] esk. *arteã*.

[82] eguiteco] esk. *eguitego*. Bistaz denez, 2. esaldia kopiatzean ez zuten zuzendu.

[83] çuri] esk. *curi*.

| **Prozesua** | **Prozesu-adierazpena** |
|---|---|
| | (6’) [...] <21r> Nic, Martin, çuri,[84] Maria, prometacen derauçut[85] neure fedea çure[86] senar içaiteco[87] eta çuçaz[88] verce emazteric ez eguiteco eta vici naicen artean[89] ez faltaceco [...]. |
| | (7’) [...] Nic, Maria, çuri,[90] Martin, prometacen[91] derauçut neure fedea çure[92] emazte izaiteco eta çuçaz[93] verce senarric[94] ez eguiteco eta vici naicen artean[95] ez faltaceco eta lealquiro mantenaceco [...]. |

### *2.2.7.3.2. Iruzkina*

Grafian, inoiz <c> *pro* <ç> dugu: *deraucut*, *curi*, *cure*.

Fonologia aldetik, *-r(t)z-* kontsonante multzoa mantentzen da *verce* adibideak erakusten duenez. Morfologia aldetik, *neure* izenordain indartua dugu, eta Linschmann-Aresti legea betetzen du. Dena den, ez da sistematikoki bete, behin *ene* agertzen baita ondoko adibidean: *ematen derauçut ene fedea*. Bestalde, mugagabearen erabilera nabarmena da: *çure senar içaiteco*, *çure emazte içaiteco*. Instrumentalean aldaera bizkarkaria da beti. Gainera, izenordainetan *-zaz* erabiltzen da: *çuçaz*. Aipagarri da *-kiro* atzizkia erabiltzen dela: *lealquiro*.

Aditzaz den bezainbatez, aditz-izenetan *-iteco* agertzen da *içaiteco* eta *izaiteco* adibideetan, baina *ematen* dago beti. Bestalde, **eradun* laguntzailea erabiltzen da NOR-NORI-NORK sailean: *ematen derauçut*, *prometacen derauçut*. Amaitzeko, denborazko perpausetan *naiçan artean* eta *naicen artean* biak agertzen dira. Dena den, orokorrean *-en* erabiltzen da, eta *naiçan* adierazpenean bakarrik agertzen da, eta hor 12r orrialdean bakarrik.

Lexiko aldetik, goi-nafarreraz usu erabiltzen den *mantenaceco* aldaera dago.

84 çuri] esk. *curi*.
85 derauçut] esk. *deraucut*.
86 çure] esk. *cure*.
87 içaiteco] esk. *icaiteco*.
88 çuçaz] esk. *cucaz*.
89 artean] esk. *arteã*.
90 çuri] esk. *curi*.
91 prometacen] esk. *prmetacen*.
92 çure] esk. *cure*.
93 çuçaz] esk. *cuçaz*.
94 senarric] esk. *senaric*.
95 artean] esk. *arteã*.

### *2.2.7.4. Uterga*

Hurrengo ezkontza fedea Utergakoa da, eta 1547an izan zen. Orduko hartan, Joana Utergakok eta Martin Azteraingok elkarrekin ezkonduko zirela hitz eman zuten. Halere, bi urte geroago Martin beste emakume batekin ezkondu zen Elizaz. Orduan, Joanak egoera salatu zuen, baina epaileak Martinen bigarren ezkontza hobetsi zuen. Gaur egun, Iruñeko Elizbarrutian dago 1549ko prozesu batean (C230, 9 zk., 1v).

Satrustegik (1977a) eman zuen lehenengoz ezagutzera lekukotasun hau faksimile eta edizioarekin. Halaber, ondoren Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.2) eta Satrustegik (1987: 22) testua berrargitaratu zuten. Hona dakargun edizioa egiteko originala ikusi dugu.

Ditugun bi esaldi hauek zuzenean emaztegaiaren ahotik jasoak dira, eta biak daude 1v orrialdean.

#### *2.2.7.4.1. Testua*

> (1) [...] Nic, Martin, i,[96] Joanna, arçen aut neure alaroçaçat eta hic ar naçan ire esposoçat, eta prometaçen[97] dinat ez verçe emazteric eguiteco i vaycen[98] vici nayçen artean eta guardaçeco lealtadea. Ala fedee. Ala fedee. Ala fede [...].
>
> (2) [...] Nic, Joanna, i, Martin, arcen aut neure sposoçat eta hic ar naçac eure sposaçat, eta prometaçen[99] diat ez verce senarric eguiteco viçi naycen artean eta guardaçeco lealtadea. Ala fedee. Ala feede. Ala fedee [...].

#### *2.2.7.4.2. Iruzkina*

Grafiaz den bezainbatez, agertzen diren bi <h>-ak espletiboak dira: *hic*; cf. *i* 'hi' hiru aldiz eta *ire*. Bestalde, emaztegaiaren fedean grafia kultua agertzen da *sposoçat* eta *sposaçat* adibideetan, baina senarrarenean *esposoçat* dugu. Bestalde, *prometaçē* hitzaren kasuan, bi kasuetan, diakritikoa du azken bokalak, kontsonante sudurkariaren ordez.

Fonologian, *-r(t)z-* kontsonante multzoa mantentzen da: *verce*. Morfologia aldetik, prolatiboan *-zat* dago: *esposoçat*, *sposoçat*. Aditzez den bezainbatez, ez da **eradun* agertzen, *-i(n)-* erroa baizik: *prometaçen dinat*, *prometaçen diat*. Bestalde, aditzetan hitanoko formak erabiltzen dira; bai senarrak emazteari bai honek bere senarrari hika hitz egiten diote elkarri: *diat*, *dinat*, *naçac*, *naçan*, *aut*. Indikatibotik landako perifrasietan aditzoina mantentzen da: *ar naçan*, *ar naçac*. Sintaxiaz den bezainbatez, Linschmann-Aresti legea betetzen da, baina ez beti: *arçen aut neure alaroçaçat*, *hic ar naçac eure sposaçat*, baina *hic ar naçan ire esposoçat*.

---

[96] i] hasiera batean *yri* idatzi zuela dirudi; <y>ren ondoren bi hizki tatxaturik daude, eta azkena <i> dela ematen du.

[97] prometaçen] esk. *prometaçē*.

[98] vaycen] aurretik *vaiçen* tatxaturik dago.

[99] prometaçen] esk. *prometaçē*.

Lexikoaz den bezainbatez, Satrustegik eta Sarasolak aipatu zuten *alaroça* 'neskalagun ezkondu berria' mailegua agertzen dela. Agerraldi hori da hitzaren lekukotasun bakarra eta, Peillenek (1980: 42) iradoki duenez arabiar jatorria du. Senargaiak erabiltzen du *alaroça*; aldiz, emaztegaiak *esposa* darabil sinonimotzat. Bestalde 'gordetzeko' esateko *guardaçeco* aldaera ageri da.

### *2.2.7.5. Olatzagutia*

Olatzagutian auzia izan zen 1548an, euskarazko ezkontza fede bat zela eta. Juan Ibañezek jarri zuen Paskualaren aurkako salaketa hura. Helburua Paskuala harekin bizitzera behartzea zen, ustez bien artean egin zuten ezkontza fede klandestinoan oinarrituta. Paskualak, ordea, ukatu egin zuen halakorik zutenik. Satrustegik (1981: 86) kontatzen duenez, Paskuala lagunekin hurrak eta masustak biltzen ari zela Juan Ibañez hurbildu zitzaion. Juanek dioenez, Paskualak ezkontzea onartu zuen, baina emakumeak salatzen du indarkeria erabili zuela Juanek.

Ustezko ezkontza fede haren berri 1548an latinez idatzitako auzi-agiri batean jaso zen. Hala ere, lekukotzak erromantzez bildu ziren, eta horietan daude euskarazko ezkontza fedeak. Egun Iruñeko Elizbarrutiko artxiboan dago agiria, C45, 11 zk. erreferentziadun agirian. Satrustegik (1981: 86-90 eta 1987: 23-24) eman zuen ezagutzera lehenengoz. Jatorrizkoa ikusi dugunez, bertan oinarrituta egin dugu gure edizioa.

Ezkontza fedeen sei lekukotzak 1v, 9v, 10v eta 11r orrialdeetan agertzen dira, eta ustezko senargaiaren ahotik jasota daude, erromantzeko testuan sarturik. Aldiz, azken esaldia 18v orrialdean dago, eta Paskualak esandakoa da. Azken esaldi hori latinezko adierazpen luzeago batean dago.

#### *2.2.7.5.1. Testua*

> (1) [...] <1v> Vada, nic ematen derauçut[100] çuri,[101] Pascoala, neure fedea, senarrac eta emazteac ematen duten vecala,[102] eta arcen çaitut[103] neure emazteçat[104] [...].
>
> (2) [...] Vada, nic ere[105] ematen derauçut,[106] Johane, neure fedea, senarrac eta emazteac ematen duten vecala,[107] eta arcen çaitut[108] senarçat,[109] Johane [...].

---

[100] derauçut] esk. *deraucut*.
[101] çuri] esk. *curi*.
[102] vecala] esk. *vequala*.
[103] çaytut] esk. *caytut*.
[104] emaztecat] esk. *emaztecat*.
[105] nic ere] esk. *niquere*.
[106] derauçut] esk. *deraucut*.
[107] becala] esk. *bequala*.
[108] çaitut] esk. *caitut*.
[109] senarçat] esk. *senarrat*.

(3) [...] <9r> Nic, Joanes,[110] çu,[111] Pascoala, arcen çaitut[112] emazteçat[113] senarrac eta emazteac[114] elcar arcen oi duen vecala[115] [...].

(4) [...] Alaber, nic, Pascoala, çu,[116] Joannes, arcen çaytut[117] neure senarçat eta ematen derauçut[118] neure fedea senarrac eta emazteac ematen oi duen vecala [...].

(5) [...] <10v> Nic, Joannes, çu, Pascoala, arçen çaitut[119] <11r> emazteçat senarrac eta emazteac elcar arçen oy duen becala, eta ematen derauçut neure fedea.

(6) [...] Alaber, nic, Pascoala, çu, Joannes, arcen çaytut[120] neure senarçat,[121] eta ematen derauçut[122] neure fedea, senarrac eta emazteac oi duen becala [...].

(7) [...] <18v> Ay! Vijusta[123] vorssa eguiten didate! [...].

### *2.2.7.5.2. Iruzkina*

Grafiari dagokionez, *vorssa* adibidean afrikatua markatu nahi dela dirudi. Bestalde, <qu> erabiltzen da *a* aurretik ere: *vequala* & *bequala*, baina *becala* ere agertzen da. Amaitzeko, maiz <c> *pro* <ç> dugu: *cu*, *caytut*, *deraucut*.

Fonologia aldetik, arestiko adibide horietan ikusi dugunez, herskaria agertzen da *vecala* eta *becala* hitzetan.

Morfologiaz den bezainbatez, *neure* izenordain posesiboa erabiltzen da. Ergatiboan *-ak* erabiltzen da pluralean: *senarrac eta emazteac ematen duten vecala*. Gainera, prolatiboan *-zat* agertzen da: *emazteçat*.

Bestalde, **eradun* eta *-i(n)-* erroa daude indikatiboko NOR-NORI-NORK sailean: *ematen derauçut*, *eguiten didate. *Edun*-en adizkietan ergatiboari dagokion pluralaren morfematzat *-e* eta *-te* erabiltzen dira: *duten*, *duen* 'duten'. Aldiz, *-i(n)-* erroarekin *-te* dago: *didate*.

Sintaxian, Linschmann-Aresti legea betetzen da: *arcen çaytut neure senarçat, ematen derauçut neure fedea*.

Lexiko aldetik, zailtasunak ditu, gure irudiko, azken esaldiko *vijusta* horrek. Satrustegik (1987: 24) 'beldur' interpretatzen du latinezko itzulpenari jarraikiz: *violenter et vi et metu duxerunt eas*. Nolanahi ere, kontuan izan behar dugu eskuizkribuan

---

110 Joanes] esk. *Jo.*$^{es}$ laburduraz.
111 çu] esk. *cu*.
112 çaitut] esk. *caitut*.
113 emazteçat] esk. *emaztecat*.
114 emazteac] esk. *emazeac*.
115 vecala] esk. *vequala*.
116 çu] esk. *cu*.
117 çaytut] esk. *caytut*.
118 derauçut] esk. *deraucut*.
119 çaitut] esk. *caitut* : S *çaytut*.
120 çaytut] esk. *caytut*.
121 senarçat] esk. *senarcat*.
122 derauçut] esk. *deraucut*.
123 Vijusta] *-justa* lerroartean. Satrustegik *vidus ta borssa* interpretatzen du.

azken hiru letrak lerro artean daudela. Amaiera, argi dago, <-us> dela, baina <d> ez dago horren garbi, eta <j> izateko itxura gehiago du. Gainera, hitzaren banaketan ez dakigu *vijus ta* bereizi ala *vijusta* utzi. Euskara ote den zalantza egitea ere zilegi da, latina izan baitaiteke.

### *2.2.7.6. Bakedao*

Ameskoako Bakedaon izan zen arestikoen pareko ezkontza fedea. 1550ean Juan Bakedaokok Teresa Bakedaoko salatu zuen berarekin bizitzera behartzeko, bien artean pribatuan egindako ezkontza fedeagatik.

Latinez idatzitako prozesu batean daude euskarazko ezkontza fedeak, eta agiri hori Iruñeko Elizbarrutiko artxiboan dago C46, 7 zk. erreferentziarekin; 3r orrialdean daude euskarazko pasarteak. Bi esaldi dira, eta biak jaso ziren senargaiaren ahotik.

Gainerakoak bezala hau ere Satrustegik (1981: 90-91 eta 1987: 25) eman zuen ezagutzera. Guk jatorrizkoa ikusteko parada izan dugu, eta bertan oinarritu gara gure edizioa egiteko. Dena den, Satrustegirena (S) ere kontuan hartu dugu.

#### *2.2.7.6.1. Testua*

> (1) [...] Nic çuri,[124] Joaneç,[125] emayten derauçut neure fedea çuri,[126] Theresa, çure senar içayteco eta ez çuçaz[127] verce emazteric eguiteco [...].
>
> (2) [...] Nic ere,[128] Teresa, çuri,[129] Joaneç, ematen derauçut[130] neure fedea ez verce senarric eguiteco çuçaz[131] verceric [...].

#### *2.2.7.6.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, azpimarratzekoa da <c> *pro* <ç>: *curi*, *cucaz*, *deracut*.

Fonologiaz, esateko dateke *-r(t)z-* kontsonante multzoa mantentzen dela: *verce*, *verceric*.

Morfologiari dagokionez, *neure* izenordain indartua agertzen da. Horrezaz landara, instrumentalean bizkarkaria dugu: *çuçaz*. Adibide horretan ikusten denez, *-zaz* da izenordainetan instrumentaleko atzizkia. Azkenik, nabarmena da mugagabearen erabilera: *çure senar içayteco*.

Aditzei dagokienez, *emayten* eta *içayteco* forma zaharrak ditugu aditz izenetan, baina *ematen* ere badago. Horrezaz gain, NOR-NORI-NORK saileko indikatiboan **eradun* erabiltzen da: *emaiten derauçut*.

Sintaxi aldetik, Linschmann-Aresti legea betetzen dela ikusten dugu: *emayten derauçut neure fedea*.

---

[124] çuri] esk. *curi.*
[125] Joaneç] esk. *Joanec.*
[126] çuri] esk. *curi.*
[127] çuçaz] esk. *cuçaz* edo *cucaz.*
[128] ere] esk. *era* : S *eta.*
[129] çuri] esk. *curi.*
[130] derauçut] esk. *deraucut.*
[131] çuçaz] esk. *cuçaz* edo *cucaz.*

### *2.2.7.7. Agoitz*

Ondoko ezkontza fedea Agoizkoa da, eta Satrustegik (1992) eman zuen ezagutzera testuaren edizio eta faksimilearekin. Martin García Pérez Agoizkoak 1551. urtean Maria Bizkarreteko herrikideari eskatu zion, ustez, lehendik biek zuten ezkontza zina bete zezan. Emaztegaiak, ordea, esan zuen konpromisoa ez zela loteslea. Katalina Tabarko eta Graziana Urizko izan ziren lekuko eta senar-emaztegaiek elkarri ezkontza fedea eman ziotela baieztatu zuten.

Satrustegik emandako informazioaren arabera, ezkontza fede hori jasotzen duen agiria Iruñeko Elizbarrutiko artxiboan dago, 1799ko prozesu bati atxikita. Bertan 1551n Agoitzen izandako ezkontza fede haren lekukotasuna agertzen diren bi folio omen daude. Erreferentzia ematerakoan Satrustegik (1992: 61) «Procesos. Aoiz 1551, fol. 15 v.» aipatzen du, baina Elizbarrutian erreferentzia horrekin ez dugu ezer aurkitu, eta katalogoan begiratuta «Aoiz», «1551» eta «1799» sarreretan ez dugu ezkontza fede horren arrastorik aurkitu. Hori dela eta, Satrustegiren faksimilean oinarritu gara gure edizioa egiteko.

Orotara bost esaldi dira. Lehen bi esaldiak Graziana Urizko lekukoaren ahotik jasoak dira 15v orrialdean. Hirugarren lekukotasuna, aldiz, Martin Gongorak jaso zuen emaztegaiaren ahotik, galdeketan; 23r orrialdean dago. Laugarren eta bosgarren esaldiak notarioak jaso zituen, prozesuaren 24. orrialdean daude eta senarraren hitzak dira.

#### *2.2.7.7.1. Testua*

(1) [...] Nic fedea prometaçen[132] derauçut ez verçe emazteric[133] eguiteco, eta emazteçat[134] arçen çaytut [...].

(2) [...] Nic fedea prometaçen[135] derauçut ez verçe senarric eguiteco eta senarçat arçen çaytut, Martin de Eguilleorrec nay badu [...].

(3) [...][136] Ez verçe senarric eguiteco[137] çuçaz verçeric, Martin de Eguiriorrec[138] nay badu [...].

(4) [...] Nic, Martin de Monreal, çu,[139] Maria, arçen çaytut neure emazteçat[140] Erromaco legueac[141] manaçen duen vecala, eta Eliça[142] Sanduac mantenaçen duen vecala. Bay fedea. Bay fedea. Bay fedea [...].

---

132 prometaçen] esk. *pmetaçen*.

133 emazteric] esk. *emazterico*; beharbada ondoko *eguiteco*-ren eraginez.

134 emazteçat] esk. *emaztençat*.

135 prometaçen] esk. *pmetaçen*.

136 Zati honen faksimilerik ez dakar Satrustegik (1992). Beraz, pasarte honi dagozkion oharrak Satrustegiren transkripziotik atera ditugu.

137 eguiteco] esk. *aguiteco*.

138 Eguiriorrec] esk. *egujriorec*.

139 çu] esk. *cu*.

140 emazteçat] esk. *emaztecat*.

141 legueac] esk. *leguea*; aurretik hitz bat dago tatxaturik.

142 Eliça] esk. *elica*.

> (5) [...] Nic, Maria, çu, Martin, arçen çaytut neure senarçat, Erromaco legueac manacen duen becala eta Eliça Sanduac mantenaçen duen becala. Bay fedea, bay fedea, bay fedea [...].

### *2.2.7.7.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, aipagarri da, agidanez, *Eguilleorrec* eta *Eguirorrec* abizenak duen txandaketa, batean albokari sabaikaria baitugu, bestean dardarkari bakuna. Bestalde, *becala* hitzean herskaria agertzen dela ikusten dugu, ez bada <c> *pro* <ç> dugula *cu* adibidean bezala. Hotsekin amaitzeko, kontsonante multzoetan, *verçe* adibidean *-r(t)z-* mantentzen da.

Izen morfologian *-zat* erabiltzen da prolatiboan: *senarçat* eta *emazteçat*. Gainera, instrumentalean bizkarkaria dugu, eta izenordainekin *-zaz* agertzen da: *çuçaz*. Aditz morfologiari dagokionez, *prometaçen derauçut* adibideak erakusten duenez, **eradun* erabiltzen da indikatiboko NOR-NORI-NORK sailean.

Sintaxiaz den bezainbatean, Linschmann-Aresti legea betetzen da: *arçen çaytut neure senarçat*.

Lexiko aldetik, *sandu* aldaera nafarra ageri da, eta Nafarroan nagusi den *mantenaçen* dugu.

### *2.2.7.8. Zufia*

Ezagutzen dugun hurrengo ezkontza fedea 1552ko auzi agiri batean agertzen da. Hitz-ematea Zufian izan zen, Mari Miguel Zufikoren eta Diego Zufikoren artean, 1550eko Corpus egunean (Satrutegi 1987: 26). Geroztik, bikoteak ohe berean egiten zuen lo, emaztearen ahizparekin. Halere, gizonaren familiak ez zuen harremana begi onez ikusten, familien prestigio kontuagatik, eta auzitara jo zuten. Iruñeko epaileak hitzarmena ontzat hartu bazuen ere, geroago Zaragozako epaitegiak ezkontza ez zela baliozkoa deliberatu zuen. Lekuko gisa aritu ziren Martin Carlos zufiarra eta Mari Migelen ahizpa (zehaztasun gehiagorako, ik. Satrustegi 1978-79: 231 eta 1987: 26).

Auzia jasotzen duen agiria Iruñeko Elizbarrutiko artxiboan dago egun, C54, 9 zk. erreferentzia daraman agirian. Irigaraik (1933) eman zuen lehenengoz ezagutzera eta, ondoren, beste zenbaitek testuaren edizio gehiago plazaratu dituzte (Mitxelena *TAV* § 3.2.6, Apat-Echebarne 1971, Satrustegi 1978-1979, Satrustegi 1987). Dena den, Irigaraik eta Mitxelenak ez zituzten esaldi guztiak jaso, beraz, lehen edizio osoa Satrustegirena da. Guk jatorrizkoa ikusi dugu eta huraxe hartu dugu oinarri, baina Satrustegiren (S) irakurketa kontuan hartu dugu.

Ikus daitekeenez, zazpi esaldi dira guztira. Lehen bi lekukotasunak 20r orrialdean daude eta emaztegaiaren lekukotza da. Hirugarren testigantza Martin de Carlos lekukoaren hitzak dira; prozesuko 31r orrialdean daude. Laugarren eta bosgarren esaldiak 36. orrialdearen ifrentzuan daude eta Katalina andregaiaren ahizparen ahotik jasoak dira. Seigarren eta zazpigarren esaldiak ere, Katalinak esandako hitzak dira, prozesuan aurrerago beste lekukotza batean jasoak.

### *2.2.7.8.1. Testua*

(1) [...] Nic, Diego de Çufia,[143] ematen drauçut[144] neure fedea çuri, Maria Miguel, ez verce emazteric eguiteco [...].

(2) [...] Alaver, nic, Mari Miguel, ematen drauçut çuri, Diego, neure fedea ene senarçat eta ez verce senarric eguitecoz, çu bayci[145] [...].

(3) [...] Nic ematen drauçut[146] neure fedea, valdin valdin jo baneça aren senar içateco[147] [...].

(4) [...] Nic fede ematen drauçut ez verçe emazteric[148] eguiteco çu bayce [...].

(5) [...] Nic, ala, fede[149] emayten diçut ez verçe senarric ez eguiteco çu baycic [...].

(6) [...] Nic fede ematen drauçut ez verçe emazteric eguiteco eta arçen dut emazteçat[150] [...].

(7) [...] Nic ematen[151] drauçut[152] neure fedea çuri, Diego de Çufia,[153] ez verçe senarric eguiteco[154] [...].

### *2.2.7.8.2. Iruzkina*

Grafiari dagokionez, nabarmena da maiz <c> *pro* <ç>, hala nola *cufia*, *draucut*, *içateco*.

Fonologian, sinkopa agertzen da *drauçut* adibidean. Kontsonanteei gagozkiela, nabarmentzekoa da *-r(t)z-* multzoa mantendu izana: *verce*.

Morfologiari dagokionez, *neure* izenordain indartua dugu. Prolatiboan *-zat* agertzen da: *emazteçat*. Bestalde, nabarmena da mugagabearen erabilera: *aren senar içateco*. Aditzez den bezainbatez, aditz-izenetan *emayten* dugu behin, emaztegaiaren ahizpak senarraren ahotan jarrita; halere, gainerakoan *ematen* eta *yçateco* ditugu. **Edun* aditzaren formetan *-u-* dago: *dut*. NOR-NORI-NORK sailean **eradun* agertzen da, sinkopaturik: *ematen drauçut*. Dena dela, ez da sistematikoa, *emayten diçut* ere agertzen baita.

Sintaxi aldetik, *ematen drauçut neure fedea* adibideak erakusten du Linschmann-Aresti legea betetzen dela. Bestalde, helburuzko perpausak egiteko *-koz* atzizkia ager-

---

143 Çufia] esk. *cufia*.
144 drauçut] esk. *draucut*.
145 bayci] esk. *bayci* : S *baizi*.
146 drauçut] esk. *draucut*.
147 yçateco] esk. *ycateco*.
148 emazteric] esk. *emezteric*.
149 ala, fede] esk. *alafede* : S *alafede*.
150 ta arçen dut emazteçat] Sk 1978-79ko edizioan ez dakar pasarte hau; bai, aldiz, 1987koan.
151 ematen] esk. *ematen* : S *ematren*.
152 drauçut] esk. *draçut* jartzen duela dirudi.
153 Çufia] esk. *Cufia*.
154 Sk bi edizioetan *ta arçen dut emazteçat* dakar, baina eskuizkribuan ez dago.

tzen da behin: *eguitecoz*. Gainerakoetan, *eguiteco* dago. Baldintzan *jo baneza* perifrasi zaharra agertzen da. Aurkaritzako perpausetan *bayci*, *baycic* eta *bayce* hiru aldaerak ageri dira.

Lexiko aldetik, aipagarri da *jo* aditzaren adiera sexuala. Euskaraz beste zenbait lekutan ere agertzen da: Etxepareren *io badeça dardoaz ere* eta Eugiko 1566ko esaldiko *joçen çuela* adibidetan bezala (cf. § 2.2.8.9). Gainera, Mikoletak «fornicar, *xo*» (Mitxelena *TAV* § 3.2.6) dakar.

### *2.2.7.9. Espartza*

Ezagutzen den Nafarroako azken ezkontza fedea 1556ko da, Galar zendeako Espartzakoa. Hain zuzen ere, Joannis Remirizen eta bere gurasoen etxean neskame zegoen Maria Taxonarkoren artekoa da hitz-ematea. Agirian esaten denez, Joannis Mariaren atzetik zebilen, eta sexu eskean hurbildu zitzaion halako batean; orduan, neskak erantzun zion ezkondu ezean ez zuela egingo halakorik. Hori horrela, lehen aldiz egin zuten ezkontzeko promesa, baina lekukorik gabe. Beranduago, bigarren aldiz eman zuten ezkontzeko hitza, orduan aurrean bi lekuko zituztela: Joana Taxonarkoa, andregaiaren izeba, eta andre adindu bat.

Iruñeko Elizbarrutiko artxiboko agiri batean agertzen da, C48, 1 zk. erreferentziarekin. Agiriaren lehen zatia erromantzez idatzirik dago; ondoren, ordea, latinez dago gertakarien azalpena. Lekukotasun horren berri Fagoagak (1961) eman zuen, testuaren transkripzioarekin, eta gero Mitxelenak (*TAV* § 3.2.6) berriro argitaratu zituen. Urte batzuen ondoren, Satrustegik (1977b) edizio berri bat eta faksimilea argitaratu zituen. Esan denez, lekukotasuna 1556koa den arren, 1557an jaso zen idatziz birritan, lehenik erromantzezko testuan eta, ondoren, latinez idatzitakoan. Ezin izan dugu Iruñean dagoen jatorrizkoa ikusi; hori dela eta, Satrustegik (1977b) emandako faksimilean oinarritu gara gure edizioa egiteko, bere irakurketa eta oharrak kontuan hartuta.

Agirian guztira euskarazko hamabost pasarte daude. Lehen bi esaldiak Maria Taxonarkoaren, andregaiaren, testigantzak dira, eta lekukorik ez zegoen lehen ezkontza hitz-ematekoak dira. Gainerako esaldi guztiak bigarren aldikoak dira. Ofizioak egin zituen adineko andrearenak adierazpenean jaso ziren (3) eta (5) esaldiak eta horien erantzunak diren (4) eta (6). Zazpigarren esaldia andregaiaren izeba zen Joana Taxonar lekukoaren ahotik jaso ziren epaiketan senarraren hitzak. Alabaina, azken esaldiak —gure edizioko (8) eta (9)— ezkontzaren lekuko izan zen adineko andrearen ahotik jaso ziren, eta senargaiaren eta emaztegaiaren hitzak dira. Lehen sei esaldiak latinez idatzitako azalpenean agertzen dira kopiaturik; ez, ordea, azken hirurak. Satrustegik (1977b: 265) proposatzen duenez, kopian euskarazko pasarteek jasan zituzten aldaketek iradokitzen dute kopiatzailea euskaldun jantzia zela.

### *2.2.7.9.1. Testua*

| **Prozesua** | **Kopia** |
|---|---|
| (1) Nic draudaçut fede çu emazte arceco. Alaber, çuc arçenauçu çenarçat? | (1') Nic draudaçut fede çu emazte arçeco. Alaber, çuc arçenauçu senarçat? |
| (2) Nic, alaber, arcen çaytut. | (2') Nic, alaber, arçen çaytut. |
| (3) Joannis, çuc arçen [...]ari[155] ori çeure emazteçat? | (3') Joanes, çuc arçen duçu Mari ori çure emazteçat? |
| (4) Vayez | (4') Bayez |
| (5) Alaber, çuc, Maria, arcen duçu Joanis[156] ori çeure çenarçat? | (5') Alaber, çuc, Maria, arçen duçu Joan ori çure[157] çenarçat? |
| (6) Vayez | (6') Bayez. |
| (7) Nic arcen çaytut çu,[158] Maria, neure emazteçat. Eta egun eta neure vician[159] ez verçe emazteric eguiteco prometaçen[160] drauçut[161] çu bici çaren[162] artean, Erromaco eche sanduac mandacen[163] duen beçala. | |
| (8) Nic arcen çaytut[164] neure sposaçat eta emazteçat Erromaco eche sanduac birtute duenas. Eta prometacen[165] drauçut[166] çu[167] bici çaren[168] artean eta ni vici naycen artean[169] ez berce emazteric eguiteco. Ala ene fedea, ala ene fedea, ala ene fedea. | |

155 ...ari] faksimilean ez da ongi ikusten. Fagoagak (1961) eta Satrustegik (1977b: 263) *duçu Mari ory* irakurtzen dute. Kopian dagoena ikusirik, horrek dirudi irakurketa ziurra.

156 Joanis] esk. *Joãis*.

157 çure] esk. *cure*.

158 çu] esk. *cu*.

159 vician] esk. *viciã*.

160 prometaçen] esk. *pmetaçen*.

161 drauçut] esk. *draucut*.

162 çaren] esk. *çarē*.

163 mandacen] esk. *mãdacen*. Satrustegik (1977b) *mandacen* transkribatzen du; ez dago <n>-rik, baina <a> gaineko markak sudurkaria isla lezake.

164 çaytut] esk. *caytut*.

165 prometacen]esk. *pmetacen*.

166 drauçut] esk. *draucut*.

167 çu] esk. *cu*.

168 çaren] esk. *caren*.

169 artean] esk. *arteã*.

| **Prozesua** | **Kopia** |
|---|---|
| (9) Nic arcen çaytut neure emazte eta sposaçat Erromaco eche sanduaren[170] virtuteas. Eta prometacen[171] drauçut[172] çu bici çaren artean[173] eta ni vici nayzen artean[174] ez verçe senarric eguiteco.[175] Ala ene fedea, ala ene fedea, ala ene fedea. | |

*2.2.7.9.2. Iruzkina*

Grafia kontua dirudi *çenar* eta *senar* adibideen artean dagoen txistukarien txandaketak. Bestalde, maiz <c> *pro* <ç> dugu: *cu*, *draucut*, *caytut*… Azkenik, hitz amaierako sudurkari askoren ordez, bokalaren buztana luzatzen da, hala nola *viciā*, *çarē*, *sanduarē*. Bestalde, sudurkariaren ordez, bokalaren gainean diakritikoa dute bi hitzek: *Joāis*, *mādacen*.

Fonologia aldetik, sinkoparen adibide da *draudaçut* adizkia.

Morfologian, *çeure* eta *neure* izenordainak daude. Horrezaz gain, prolatiboan *-zat* agertzen da: *sposoçat*, *emazteçat*. Bestalde, *-s* dago instrumentala: *duenas*, *virtuteas*.

Aditzaz den bezainbatean, batetik, **edun* aditzaren erroa *-u-* da: *duçu*. Bestetik, **eradun* agertzen da, adizki sinkopatuekin: *draudaçut* 'ematen dizut', *prometaçen drauçut*. Ohart gaitezen, bi adizkiak nik-zuri-hura badira ere, ez direla berberak, *draudaçut* —ergatiboaren marka pleonastikoarekin— eta *drauçut* ageri dira.

Sintaxiaz den bezainbatez, Linschmann-Aresti legea ez beti betetzen. Halere, ohartzekoa da, jatorrizkoetan betetzen dela legea; ez, ordea, horien kopietan: *Joannis, çuc arçen […]ari ori çeure emazteçat?* → *Joanes, çuc arçen duçu Mari ori çure emazteçat?*, *Alaber, çuc, Maria, arcen duçu Joanis*[176] *ori çeure çenarçat?* → *Alaber, çuc, Maria, arçen duçu Joan ori çure çenarçat*.

## 2.2.8. Esaldi eta testu laburrak

Azpiatal honetan, auzi-agirietan edo prozesuetan goi-nafarreraz lekukotu diren esaldi eta testu laburrak aurkeztu eta iruzkinduko dira. Horietariko gehienak lehenagotik argitaratuak daude; asko Maiorak (2011) bildu zituen, baina badira beste zenbaitek ezagutzera emandakoak ere: esaterako, Erdoziak (2005) eta Urrizolak (2004, 2007b) jasotakoak, Mitxelenak (*TAV*), Satrustegik (1978-79, 1981, 1991a) eta Sarasolak (*ConTAV*) emandakoez lekora. Nolanahi ere den, argitaraturik egon arren, ahal

[170] sanduaren] esk. *sanduarē*.
[171] prometacen] esk. *pmetacen*.
[172] drauçut] esk. *draucut*.
[173] artean] esk. *arteā*.
[174] artean] esk. *arteā*.
[175] eguiteco] esk. *egujtego*.
[176] Joanis] esk. *Joāis*.

izan den heinean, jatorrizkoak kontsultatu ditugu geure irakurketa kritikoa egin ahal izateko. Hori dela eta, beste autoreek ikusi ez dituzten esaldi gutxi batzuk agertu dira. Aparatu kritikoan beste editoreen irakurketa proposamenak jasotzen dira, hurrenkera kronologikoari jarraituta eta irakurketa bakoitza editorearen abizenaren lehen letrarekin markatuta. Gainera, aurreko editoreek oker emandako erreferentzia batzuk zuzendu dira, batez ere, Artxibo Nagusiak sarean jarri dituen prozesuen fitxei esker. Azken aldian dezente dira agertu diren lekukotasun orain arte ezezagunak (cf. Maiora 2011; Santazilia 2015, 2017, 2018 eta 2019), eta ziurrenik gehiago ere gertuko dira. Irekia geratzen da, beraz, goi-nafarrerazko testu zaharren corpusa osatzen jarraitzeko aukera.[177]

Laburki bada ere, interesgarria izan daiteke gisa horretako prozesuetan lekukotzak nola jasotzen ziren jakitea. Horretan, lan eskerga egin du Monteanok (2017). Nafarroako Artxibo Nagusian 1496-1836 bitarteko 350.000 prozesutako agiri daude (Monteano 2017: 48-49) eta horietarik 100.000 XVI. mendekoak dira. Prozesua salaketarekin abiatzen zen, eta galdeketak egiteko horretan ziharduten funtzionarioak bidaltzen zituzten epaileek, ondoren guztia jasotzen zen liburu batean.

Beraz, normalean, aitorrek ez zuten epailearen aurrean hitz egiten, horretarako eskumena zuten funtzionarioen aurrean baizik. Iruñean baziren galdeketak, epaitegiko ofizialek egiten zituzten, etxe azpiko estudioan; aldiz, hiriburutik kanpo egiteko, komisario bat bidaltzen zuten eta ostatuan bertan edo inoren etxean egonez gero hor bertan egiten zen galdeketa; beti sekretuan izaten ziren, eta amaieran funtzionarioak lekukoari jasotakoa irakurtzen zion, onespena eman eta *probantza* sinatzeko (Monteano 2017: 49-50). Lehenago azaldu dugunez (ik. § 1.3.2 eta dagokion oin-oharra), lekukoak gaztelaniaz bazekien, gaztelaniaz egiten zen itaunketa; aldiz, euskaraz besterik ez bazekien idatziz itzulpen zehatza edo euskaraz inolako aldaketa eta eransketarik gabe jasotzen zen (Monteano 2017: 50-51) idatzirik.

Hain zuzen ere, prozesu horietako euskarazko pasarteak dira ondoren datozen lekukotasunak. Eskualdeka sailkatu eta aztertu ditugu, baina eskualde geografikoak dira, ez beti linguistikoak (ik. 5. mapa); alegia, bi herri eskualde berean sartu izanak ez du adierazten mintzo berekotzat ditugunik. Eskualdeak antolatzeko ondoko hurrenkerari jarraitu diogu: Bortziriak (§ 2.2.8.1), Baztan (§ 2.2.8.2), Basaburu Txikia (§ 2.2.8.3), Larraun (§ 2.2.8.4), Araitz-Betelu (§ 2.2.8.5), Sakana (§ 2.2.8.6), Ultzamaldea (§ 2.2.8.7), Esteribar (§ 2.2.8.8), Erroibar (§ 2.2.8.9), Eguesibar (§ 2.2.8.10), Artzibar (§ 2.2.8.11), Zaraitzu (§ 2.2.8.12), Ameskoa (§ 2.2.8.13), Goñerri (§ 2.2.8.14), Deierri (§ 2.2.8.15), Lizarrerria (Metauten eta Barbarin; § 2.2.8.16), Gesalatz (§ 2.2.8.17), Ollaran (§ 2.2.8.18), Oltza (§ 2.2.8.19), Iruñerria (§ 2.2.8.20), Etxauribar (§ 2.2.8.21), Izarbeibar (§ 2.2.8.22), Elortzibar (§ 2.2.8.23), Itzagaondoa (§ 2.2.8.24), Urraulbeiti (§ 2.2.8.25), Agoitzaldea (Irunberri eta Longidako Artaxo; § 2.2.8.26), Ibargoiti (§ 2.2.8.27). Orbaibar (§ 2.2.8.28), Artaxoa (§ 2.2.8.29) eta Uxue (2.2.8.30). Horiezaz landara, geografikoki kokatu ezin izan ditugun beste hiru lekukotasun jaso ditugu amaieran (§ 2.2.8.31). Eskualde asko izan arren, beren artean desoreka handia dago. Batzuetan, Iruñerrian adibidez, eskualdeko

---

[177] Liburuaren argitalpena bidean zela izan dugu Maioraren (2018) azken lanaren berri eta, beraz, ezin izan dugu liburua garaiz erabili eta bertako lekukotasunak hemen sartu.

zenbait herritako esaldiak ditugu; beste batzuetan, aldiz, herri bakar bateko esaldi bakarra dugu.

Eskualde bakoitzeko lekukotasunak kronologikoki emanak daude, eta horietako bakoitzaren izenburuan herria, urtea, artxibategia eta agiriaren erreferentzia eman dira. Ondoren, haien iruzkina dator. Beraz, eskualde bakoitzak bere hizkuntza-iruzkina dauka.

Lekukotasun hauek guztiak erromantzez —nagusiki, gaztelaniaz— idatzitako agirietan txertaturik daudenez, esaldiak beren testuinguruan ematen ahalegindu gara, hain zuzen ere, testuingurua izateak eta gaztelaniazko itzulpena izateak esaldia interpretatzen lagundu baitezake.[178]

### *2.2.8.1. Bortziriak*

Aurkeztuko ditugun lehen esaldiak Bortzirietakoak dira; zehazki, Lesakako hiru eta Arantzako bat dira jaso ditugun lekukotasun guztiak, hiru orotara. XVI. eta XVII. mendeetakoak dira, eta Nafarroako Artxibo Nagusiko prozesuetatik atereak daude. Liskarren poderioz abiatutako prozesuetan lekukoek euskaraz egindako aitorpenak dira guztiak. Maiorak (2011: 42, 122, 135 eta 151-152) eman zituen, dakigula lehenengoz, ezagutzera. Dena den, Arantzako lekukotasunean agertzen den 19r-ko esaldia ez zuen jaso. Ondoren, Santaziliak (2015) 1549ko esaldiaren irakurketa berria eta haren azterketa aurkeztu ditu. Jatorrizkoak ikusteko parada izan dugunez, horietan oinarritu gara gure edizioak osatzeko.

#### *2.2.8.1.1. Testuak*

a) Lesaka, 1549; NAN 65107.

> <121v> […] en que oyó y comprendió que el dicho Ripa dixo y habló no sabe con quién las seguientes: *Suc ezindiro erran au ola baten es galceagatic*,[179] que quiere en romance dezir: «Vos no diríais esto por no perder una errería».

b) Lesaka, 1609; NAN 149794.

> <2r> […] respondiendo y dirigiendo las palabras con el alcalde, dixo en bascuence: *Gueçurra da, eta geçurra dionari*[180] *gueçurra diola erran*[181] *bear çayo. Eta alacoac bear du mordaça.* Repitiendo las palabras dos y más vezes, que vueltas en castellano quieren decir: «Es mentira, y a quien miente que miente se le a de decir. Y el tal es menester una mordaça».
>
> <2v> […] dixo en altas vozes y por muchas vezes en bascuenze: *Bellaco, oçar traydorea! Ser eguin nay derauec*[182] *oriey?* Que bueltos en castellano

[178] Lana gehiegi ez luzatze aldera, ez dugu sakondu gertakarian. Edonola ere, gertakaria behar bezala ezagutzea zinez garrantzitsua da lekukotasuna ongi ulertu eta interpretatzeko.

[179] es galceagatic] M *esgaldugatic* : S *es galceagatic*. Irakurketa arazoak egon daitezke, eta *es* beharrean *ce* ere irakur liteke. Ez dirudi, ordea, hala irakurri behar denik.

[180] dionari] <d> eta <i>ren artean letra bat dago tatxaturik; <a> dela dirudi.

[181] erran] esk. *eRan*.

[182] derauec] esk. *derauec* : M *darayce*.

quieren dezir conforme suenan en el lenguaje de aquella tierra y montaña: «¡Bellaco, perro traidor! ¿Qué les quieres hazer a esos?»

c) Lesaka, 1626; NAN 286452.

<3r> […] y la acusada la dixo en lengua bascongada estas palabras: *Ay aquerr larreco çapu*[183] *larru edequiçallea, gaystoa!* Que quiere dezir en lengua castellana: «Ay, bellaca, quitadora de pellexos a los sapos del aquelarre». […] El quinto testigo dice no oyó más de solo que dixo a la quexante: *Çapuari*[184] *larru edequizallea*,[185] que quiere dezir «quitadora del pellejo a los sapos».

d) Arantza, 1663; NAN 16689.

<19r> […] y mostrando enfado y enojo, el dicho Phelipe le dixo al <19v> presentante: *Çu veti çavilça errebolvitzen*, que quiere decir «él siempre anda revolviendo». Y el presentante le respondió que él no revolvía a nadie sino que conservava sus drechos.

<21r> […] le dixo oiéndolo este testigo y pudiéndolo oír mejor por estar más cerca todos los demás vecinos: *Çu, nastadore ori, or çaude*, que dice que quiere decir «aý está el que es un revolvedor», de la cual raçón juzgó este testigo y todos que el presentante hiciera alguna demostrazión, mas vio que no la hiço, sino que solamente le respondió: *Ni ez nayz nastadorea,* que quiere decir «yo no soy revolvedor».

<53v> […] le dixo Phelipe mostrándose colérico y enoxado al dicho Vicuña esta raçón: *Çu çara nastadore vat*, que dice que es haverle dicho «revolvedor».

#### *2.2.8.1.2. Iruzkina*

Grafian txistukarien nahasketa gertatzen da, baina ezin jakin benetan ahoskerari dagokion ala kontu grafikoa den: *suc*, *es* (1549), *ser* (1609), baina *galceagatic* (1549), *gueçurra*, *çayo*, *mordaça*, *oçar* (1609). Bestalde, aipagarria da *errevolvitzen*-eko <tz> grafia (1663), afrikatua islatzeko.

Fonologian, arestian aipaturiko txistukarien grafia nahasketaren ondorioz, ez dakigu herskari aurretik neutralizaziorik dagoen ala ez, adibide bakarra baitago: *gaystoa* (1626). Gainera, adibide horretan 'gaixtoa' adierazkorra ere izan genezake. Bestalde, ez dago hasperenik: *au* (1549), *alacoac*, *bear*, *nay*, *oriey* (1609). Asimilaziozko sabaikaritzea badela dirudi *edequiçallea* & *edequizallea* (1626) adibideetan ikus dezakegunez.

Izen morfologiari dagokionez, *-zaile* atzizkia izenak sortzeko emankorra bide da: *edequiçallea* & *edequizallea* (1626). Datibo singularrean *-ari* agertzen da: *dionari* (1609). Aldiz, pluralean *-ey* dago: *oriey* (1609).

Aditzetan, **io* aditza erabiltzen da forma jokatuan: *dionari*, *diola* (1609). Horrezaz gain, *ibili* aditzaren indikatiboko *çavilça* (1663) ere badago. Lekukotasun berean *egon*-en *çaude* (1663) aginterazko trinkoa agertzen da. Perifrasien artean, NOR-

[183] çapu] esk. *capu*.
[184] çapuari] esk. *capuarri*; beharbada ondoko *larru*-k eragin du <r> bikoiztea.
[185] edequizallea] esk. *edequizallea* : M *edequi yallea*.

NORI-NORK sailean **eradun* erabiltzen da hitanoko forman: *eguin nay derauec oriey*. Indikatibokoa ez den NOR-NORK sailean **iron* agertzen da: *ezindiro* 'ez zenezake'.

Sintaxian, TO-GEN egitura dugu: *ola baten es galceagatic* (1549).

Lexikoan aipagarri da *edequiçalle*, *edequizallea* (1626); gaztelaniaz 'quitadora' da ordaina. Ekialde zabalekoa da *edeki* aditza, eta Nafarroan Amenduxek *edequiric* dakar. Bestalde, *çapu* 'apo' aldaera ez da *OEH*n jasotzen. Era berean, *oçar* (1609) agertzen da, irain gisa; gaztelaniazko itzulpenean *perro* agertzen da. Amaitzeko, aipagarri da *nastadore* (1663) 'revolvedor'; *OEH*n ez da hitz hau jasotzen

### *2.2.8.2. Baztan*

Nafarroako iparraldean jarraituz, Baztangoak dira orain dakartzagun esaldiak. Lehena XVI. mendekoa da, besteak XVII. mendekoak, eta bailarako lau herritakoak dira: Ziga, Oronoz, Amaiur eta Irurita, hain zuzen ere. Lehena berriki agertu den dokumentu batean dago eta ez du oraindik katalogazio zenbakirik agiriak; horko esaldiak Santaziliak (2017) argitaratu eta aztertu ditu; bigarrena ere Santaziliak (2018) eman du ezagutzera. Azken biak Maiorak (2011: 148-149) argitaratu zituen.

Guztien jatorrizkoak ikusteko aukera izan dugu, eta berorietan oinarritu gara gure edizioa egiteko. Iruritakoaren berri ematean, Maiorak (2011: 149) jarritako erreferentzia —16505— Lizarra inguruan 1660an gertatutako prozesu batekoa da, eta bertan ez dugu euskarazko esaldirik aurkitu. Dena den, Artxibo Nagusiak sarean jarritako fitxei esker, jakin dugu erreferentzia zuena 016515 dela.

#### *2.2.8.2.1. Testuak*

a) Ziga, 1576, NAN z.g.

> <2v> (...) el cual le dixo en bascuençe a la dicha serorea: «*Nor dacarçu? Ori?*» que es dezir «¿A quién traeis? ¿A essa?» Y ella le respondio «*au da, jauna, erretore Çigacoaren ylloba*,» que es dezir «esta es sobrina del rector de Ziga.» (...) Le dixo «*ic gure legueco nay dun*», que es dezir «tú quieres de nuestra ley.» Y la dicha serora le dixo que le diese que sí; y assí, le dixo (...) «*bay jauna*».
>
> <5r> (...) los cuales vozeando les dizeron: «*A, echa andre onac, egaloc ongui bustiric hecheraco çarate*,» que es dezir: «O buenas chandras, bien mojadas las aldas iréis a vuestras casas.»
>
> <39v> (...) porque dixo en bascuençe: «*Ni ere jarrayquico nayçaye ari eta aren ylobay*[186]»

b) Oronoz, 1606; NAN 2144.

> <60v> (...) «*bay, çure begui orri huçico diogo*[187] *o[...]hequi sarçera*», que buelto en castellano quiere dezir: «sí, a su hojo le dexaremos entregar con esse assiento.»

---

[186] ylobay] esk. *ylobaya*. Santaziliak azaltzen duenez, bukaera *-a* hutsa izan daiteke.
[187] diogo] esk. *digo*.

c) Amaiur, 1659; NAN 151944.

< z.g. v>[188] […] que le dixo al dicho Miguel de Alemán, su hermano, con mucha cólera estas raçones en vascuence: *Jaincoaren passioa! Uçac, anaya, oray ere gueyago dituc oronac eces egunac*, que en romance quiere decir: «Dexarlos, hermano, que, por la pasión de Dios, son las más horas que los días», que al sentir de dicho testigo las dichas raçones son palabras de amenaças y desafío.

d) Irurita, 1660; NAN 016515.

<14v> […] la muger del dicho Sancho Sagüesa dijo desde la ventana estas palabras: «Las desvergonzadas los días pasados muy adentro y a lo caliente havéis andado o me havéis andado», que en lengua bascongada se dize: *Aalquegabeoc, guan den egunetan barrena eta beroro ibili zazayztate*.

*2.2.8.2.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, hasperenaren aztarnarik ez da, baina bai hori galtzeak eragindako bokal bikoitzarena: *Aalquegabeoc* (1660). Horrezaz landara, *oa* > *ua* bilakabidea gertatzen dela dirudi, *guan* (1660) adibidean dakusagunez. Adibide berean, grafiari esker ikus dezakegu sabaiaurrekoa dela **j-*. Bestalde, *oronac* (1659) hitzean ikus daitekeenez, goi-nafarreraz ohikoa den *o-e* > *o-o* gertatu da. Latinetik datozen maileguetan, *-ione* > *-io* aldaketa dugu, horren erakusle: *passioa* (1659).

Izen morfologiari dagokionez, *-ro* moduzko adberbioak sortzeko atzizkia agertzen da: *beroro* (1660). Bestalde, hurbileko artikulua lekukotzen da: *egaloc* (1576), *Aalquegabeoc* (1660).

Aditzei dagokienez, *ekarri* aditzaren *dacarçu* (1576) forma trinkoa agertzen da, eta lekukotasun berean ikus daitekeenez, *-u-* da **edun* aditzaren erroa: *dun* (1576). *Izan* aditzean, Nafarroan, testu zaharretan behinik behin, nagusi den *çarate* (1576) agertzen da. Horiezaz gain, *utzi* aditzaren *uçac* (1659) aginterazko formak ditugu. Bestalde, alokutiboko *dituc* (1659) indikatibozko adizki trinkoa ere agertzen da. Azkenik, *zazayztate* 'zatzaizkidate' (1660). Adizki horretan *-z-* da absolutiboari dagokion pluralgilea eta ez du *-ki-* datiboaurrekoa. Sail berean, baina singularrean *jarrayquico nayçaye* (1576) agertzen da. Ohart gaitezen, laguntzaileak *-ai-* duela.

Sintaxi aldetik, konparaziozko perpausak osatzeko *eces* partikula erabiltzen da: *oray ere gueyago dituc oronac eces egunac* (1659). Gainera, erlatibozko perpausetan *-en* da atzizkia: *guan den egunetan* (1660). Azkenik, Zigan [Izena + Gen.] egitura agertzen da: *erretore Çigacoaren* (1576).

Lexiko aldetik, nabarmentzekoa da *oronac* (1659) hitzaren agerrera. *OEH*ren arabera, Hegoaldean Lizarraga Elkanokoak erabiltzen zuen eta Aezkoan, Zaraitzun eta Erronkaribarren ere lekukotzen da. Agerraldi honekin Baztanera ere luza liteke hitzaren hedadura. Amaitzeko *jarrayquico* (1576), *aalquegabeoc* (1660) eta *oray* (1659) ekialde zabaleko hitz eta aldaerak ditugu.

---

[188] <v>] agiriko orrialdeek ez dute zenbakirik; beraz, ez dakigu zein zen lekukotasun hau daraman orrialde zenbakia, baina aurkian dago.

### 2.2.8.3. *Basaburu Txikia*

Hurrengo esaldiak Gipuzkoarekin muga egiten duen Basaburu Txikikoak dira, eta ondoko herrietako lekukotasunak ageri dira: Goizueta, Ezkurra, Beintza-Labaien, Areso eta Leitza. xvi. eta xvii. mendetakoak dira, eta Maiorak (2011: 28, 68, 85, 90 eta 119) eman zituen ezagutzera. Hala ere, Maiorak ez zuen jaso Aresoko 1608ko agiriko <259r> orrialdean dagoen azken lekukotasuna. Berrikiago, Ezkurrako 1569ko esaldiaren irakurketa berria eta azterketa eskaini dizkigu Santaziliak (2015), eta horiekin batera Maiorak eman ez zuen agiri bereko euskarazko beste esaldi bat ere badakar, hemen dakargun Ezkurrako lehena. Bestalde, agiri horretako 96r-ko azken esaldia ez zuen jaso Maiorak; aldiz, Santaziliak oin-ohar batean eman zuen.

Jatorrizkoetara jo dugu gure edizioa egiteko, baina Goizuetako 1633ko lekukotasunen azken esaldia ez dugu aurkitu, ziurrenik gure abilezia faltagatik.

#### 2.2.8.3.1. *Testuak*

a) Goizueta, 1535; NAN 8706.

> <z.g. r> […] que dixo el dicho acusado en bascuenze preguntando: *Cer da? cer da?*

b) Ezkurra, 1569; NAN 68142.

> <81v> […] *ene anayari*[189] *bere asentutic lequ eguioçu*.
>
> <83r> […] y el dicho Martingo les dixo, luego que los alcançó, que pastores o otros daban vozes, e yendo en par de la cruz oyeron una voz que dixo: *Joanes Gaztearena norbaytec*[190] *il du*. Y pasaron un poco adelante y vieron que vaxaba por una pieça avaxo una moça que benía deziendo las dichas razones y que dezía: *Ay, ene becataria! Joanes Gaztearena norbaytec il du*.
>
> <94r> […] que el dicho Joan Martínez de Ezcurra alçando el dedo de la mano derecha a la frente dixo en bascuence: *Bada, Joanes Gaztearena eta Christobal*[191] *eta Liçarçaren semea, çuec eguiten didaçu eta beguira euqueçu.* Y que el dezir aquello con aquella manera lo tubo este testigo por amenaza pa que se lo abían de pagar. <94v> Preguntada si dixo estas palabras, *pagatuco deraudaçu*, que vueltas en romance quieren dezir «pagármelo eis», dixo que no comprendió que dixere *pagatuco deraudaçu*, sino *çuec eguiten didaçu eta veguira euqueçu*.
>
> <96r> […] que dixo el dicho Joan Martíniz de Ezcurra fueron las siguientes, alçando un dedo u dos de la mano derecha a la frente: *Vada, pagatuco didaçue*. Y que a estas palabras respondió el dicho Joanes Gaztearena las palabras siguientes: *Desaffiaçen gaytuçu?* Y Joan Martíniz de Ezcurra respondió: *Nic es*. Preguntado si dixo el dicho Joan Martíniz que el pago abrá de ser por su […] dixo que no entendió tal esse testigo, sino solo lo que dixo: *Bada, pagatuco didaçue*.

---

[189] anayari] esk. *anayaRi*.
[190] norbaiytec] hasiera batean *norcbaytec* idatzia; ondoren lehenengo <c> tatxatu zuten.
[191] Christobal] esk. *Xjtobal*. Hitzaren amaieran hizki bat tatxaturik dela dirudi.

<274r> […] y al tiempo oyó que algunos bezinos de Ezcurra que estaban cabe este testigo en bascuenze: *Acheguina çeagoc*.

c) Beintza-Labaien, 1585; NAN 70193.

<14r> […] le puso en combersación este testigo, deziéndole Miquele si Martín Pérez abía tenido que azer con María de Çubieta, y él en bazcuenz, que es su propia lengoa, le respondió: *Bay, bay issan*.

d) Leitza, 1590; NAN 1686.

<45r> […] deziéndole por muchas vezes en bascuence: *Alcate, bay alcate, teniente ere moça*. Dando a entender que no era para azer el oficio de alcalde ni de teniente.

e) Areso, 1608; NAN 40932.

<258v> […] en particular, le dixo en la dicha iglesia la dicha María de Ansorena a daltas bozes y una y más bezes, de manera que lo podiesen oír todos los que allí estaban, estas palabras: *Çiquiña! Sabel gaysto siquina! Oquelu siquina! Nola errecebitu*[192] *dun orlaco jauna hire gorpussean?*[193] *Humeguile gaystoa!* Deciendo las dichas palabras en bascuence y otras muchas que, al presente, no las tiene a memoria […] y después de mobido este negocio contra los acusados de cómo la dicha María de Argaina «hera una <259r> bruja, mala muger», deciéndole también estas palabras: *Siquina, humeguile gaystoa!* […] porque dixo no sabía escribir ni firmar a ruego della su firmé yo el dicho comisario, balgan los sobrepuestos dos en el agrabio *hire gorpusçean* y no dan en los cancelados argay ojo.

<262r> […] y de manera que pudiesen oír estas palabras en bascuence a la dicha María de Argaina, estando presente su marido: *Puta çarra, aça gaystos erdiçen çarana, siquina humeguile gaystoa!* Reiterándole las dichas por muchas y dibersas vezes en que esta testigo y todos los que assí oyeron quedaron espantadas y admiradas en que le dixiesse semejantes palabras a la dicha acusada en presencia de su dicho marido y el abérselos sufrido unas palabras tan feas y malsonantes que no quisso poner manos en la dicha María de Ansorena […].

<264r> […] la dicha Miqueleiça de Gorriti, hermana de la dicha María de Gorriti, estas raçones en bascuence: *Hic bayño obeas ler eguiniquin*[194] *neagon eta ni becalacoas*[195] *nay huque. Gaystoa dun hire semea, gaysto probatua bates bayno gueyaos, gaysto probatua dun.* Y estas dichas palabras le dixo la dicha Miqueleiça de Gorriti […].

---

[192] errecebitu] esk. *eRecebitu.*

[193] hire gorpussean] M *hirgo*; lerro artean *hirego gorpussean*. Lehen hitzeko <-re-> oso juntu dago, eta ez da zaila Maiorak bezala *hirgo* irakurtzea.

[194] eguiniquin] irakurketa garbia bada ere, interpretazioa ez da batere ziurra. Beharbada errata da eta *eguiniquan* izan liteke; aurreneko <i>-ak eragindako hutsagatik. Ohart gaitezen, aurrerago *bequalacoas* dakarrela; beraz, <qu> erabiltzen da <a> aurretik. Beste interpretazioa izan liteke hitz banaketa aldatzea; alegia, *…ler eguin. Iquin neagon…* Dena den *(h)irequin* > *iquin* duen kasu bakarra genuke.

[195] becalacoas] esk. *bequalacoas.*

<266r> La susodicha estaba deciendo a daltas voces, de manera que lo podiesen oír todos los qu'estaban en la iglessia, así hombres como las mugeres, por la dicha María de Argaina estas palabras en bascuence: *Sacu gaystoa, sacu gaystoa artu dun sacramentu jauna*. Reiterando las dichas palabras por muchas bezes […].

<267r> La dicha María de Argaina luego principió a dezir a daltas bozes en la dicha iglessia de manera que lo pudiesen oír y comprender todas las personas que allí estaban estas palabras: *Monja onori, munduari hiduricaceco*[196] *artu dun sacu çarrean?*

<270r> […] Luego al momento oyó y comprendió cómo en la dicha iglessia cómo la dicha María de Ansorena, madre del dicho Joanes de Gorriti, alcalde, estaba deciendo a boces y de manera que lo pudiesen oír las mugeres y hombres que allí estaban estas palabras: *Alaco gaystoa, alaco gaystoa! Hura eguin da*[197] *lagunaren humearen honrra arrobasen*[198] *duena. Alaco gaystoa alaco gaystoa!*

<271v> […] lo que oyó y comprendió y dixo en la dicha iglessia la dicha María de Ansorena por la dicha María de Argaina, acusada, fue estas palabras en bascuence: *Gorpus gaystoan, corpus gaystoan, eçela bastante erreçebi*[199] *çessan*.

f) Goizueta, 1633; NAN 101568.

<6v> […] porque las dezían en bascuenze, heran en ella: *Bellaco ichuraguilleac* y *eta hori* ablando con dos *ezin uzi açaquet il bague*.

<7r> […] y las palabras que decía heran en bascuenze: *Bellaco figuraguillea* o *ichuraguilea*.

<8r> […] y que tras esto dixo así bien en bascuenze, que es la lengua de ella: *Bellaco ichuraguilleac, pagatu bear didazue*.

<9v> Hoyó que estando a solas ablava y diciendo en su lengoa de bascuenze: *Bellaco perdidoa, ichuroso*[200] *fama gayzto emallea, eçin emayco*[201] *ari fama gaiztoric besteay beçala.*

<…> Y atendiendo a ellas comprendió que decía en bazcuence: *Ichuras bete eta savilz, ichuraguille ori*, que quiere decir en romance, según el bazcuence de la dicha villa, «andáis lleno de figuras, el que hazéis figuras».

g) Leitza, 1677; NAN 77179.

<86v> […] y oyó que la dicha Antonia de Noguera dijo a la dicha Cathalina de Iriarte estas razones: *Juan de Iriarte etta*[202] *mase Martin tripazayac or dabilça*, que en lengoa romanzada tiene sentido que son amigos de comer a costa ajena o amigos de comidas.

---

[196] hiduricaceco] esk. *hiduricacequo*. Eskuizkribuan lehenengo <c>-ren azpian marka bat dago eta <ç> irakur liteke.

[197] eguinda] ondoren berriro dago *eguinda*.

[198] arrobasen] esk. *aRobasen*.

[199] erreçebi] esk. *eReçebiçessan*.

[200] ichuroso] esk. *ychuroso* : M *ychuras*.

[201] emayco] irakurketa garbia bada ere, ez dakigu nola interpretatu; dena den, *eman* aditzarekin lotura izan lezakeela dirudi.

[202] etta] badirudi eskuizkribuan *y* dagoela azpian.

*2.2.8.3.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, aipagarri dateke <q>-ren erabilera *u* bokalaren aurretik: *lequ* (1569). Gainera, <qua> eta <quo> agertzen dira: *bequalacoas*, *hiduricacequo* (1608). Bestalde, hasierako *u*-ren balio bokalikoa islatzen du <h> grafemak *humeguile* eta *humearen* (1608) adibideetan eta etimologikoa dirudi *honrra* (1608) adibidean. Kontu grafikoak dirudite, halaber, *hic*, *huque*, *hire*, *hura* (1608) eta *hori* (1633) adibideetan; horietan <h>-k ez bide du hasperena islatzen; izan ere, *ori* (1608,1633) ere badugu. Oro har, ez da txistukari afrikari eta frikarien arteko bereizketa grafikorik: *moça* (1590), *desaffiaçen* (1569), *uzi* (1633). Beraz, ez dakigu *Liçarçaren* eta *dabilça* hitzetan ozen ondoren frikari ala afrikatu den. Halere, saiakerarik bada afrikatua islatzeko: *gorpussean*, *gorpusçean* (1608). Dena den, *corpus* eta *gorpus* (1608) agertzen dira lekukotasun berean. Behi bada ere, <tt> erabiltzen da: *etta* (1677). Azkenik, sabaikaritze automatikoa islatzeko, irudi du, batzuetan behintzat, <il> grafia dagoenean sabaikaria dugula: *ichuraguilea* (1633), gainerako guztietan <ill> baitago. Edonola ere, hiru aldiz *humegile* (1608) agertzen da, eta ez dago <ill> duenik. Antzeko egoera dugu <in> eta <yn> grafiekin: *çiquiña* & *siquina* eta *bayño* & *bayno* (1608).

Fonologiaz den bezainbatez, herskari aurretik txistukariak neutralizatzen direla dirudi: *gaysto*, *gaystoa* (1608) baina *Gaztearena* (1569), *gayzto* (1633). Hala ere, beharbada, lehen bi adibideek sabaikaritzea islatzen dute. Bokal artean, ere txandaketa dugu: *eguioçu*, *euqueçu* (1569), *erreçebi* (1608) ditugu, alde batetik; baina, bestetik, *issan* 'izan' (1585) eta *çessan* 'zezan' (1608) daude. Dena den, *issan*-en interpretazioa ez da ziurra. Hitz bukaeran apikariaren aldeko neutralizazioa dago: *es* (1596), *obeas*, *becalacoas*, *bates*, *gueyaos*, *gaystos* (1608), *ichuras* (1633). Hitz hasieran bizkaria bere horretan mantentzen joera handiagoa badago ere, inoiz apikari egiten da: *çiquiña* & *siquina* (1608), *savilz* (1633).

Horrezaz landara, badirudi sinkopa dugula *orlaco* (1608) adibidean. Hitz hasierako herskarien artean, ahostuna da nagusi eta *gorpuz-* da gehien agertzen dena, baina behin *corpus* dugu. Amaitzeko, *-*ani* > *ai* egin da: *tripazayac* (1677).

Morfologiara pasatzen bagara, *ene* (1569) posesiboa eta instrumentalean *-s* apikaridun aldaera aurkitzen ditugu: *obeas*, *becalacoas*, *bates*, *gueyaos*, *gaystos* (1608), *ichuras* (1633), baina azken adibidearen jatorrizkoa ez dugu ikusi. Artikulu hurbilaren adibide bat dago: *Monja onori* (1608). Aditzei begiratuz gero, **edun* aditzaren erroa *-u-* da: *dun* (1608). Bestalde, hitanoko *egon*-en adizkietan *-e-* dago: *çeagoc* (1569), *neagon* (1608). Horrezaz gain, *ibili* aditzaren forma trinkoak agertzen dira: *savilz* (1633), *dabilça* (1677). Ezkurrako 1569ko esaldian agertzen den *beguira euqueçu* & *veguira euqueçu* horretan geroaldiko *-ke* bide dago. Aditzekin jarraituz, NOR-NORI-NORK sailean *-i(n)-* eta **eradun*, biak ditugu: *pagatuco didaçu*, *eguiten didaçu* (1569) eta *pagatuco deraudaçu* bi alditan (1569). Bestalde, gaztelaniazko 'pagármelo eis' itzulpena eta euskarazko ordaineko aditzetan ergatiboko *-zu* pertsona-markari *çuec* subjektua dagokiola ikusirik, badirudi aditzetako *-zu* morfema bigarren pertsona pluralekoa dela, zenbaitetan bederen: *çuec eguiten didaçu eta begira euqueçu* (1596). Nolanahi ere den, *-zue* ere badugu batzuetan: *pagatuco didaçue* (1596). Indikatibotik landakoetan *-i*-z amaitzen diren aditzekin partizipioa erabiltzen da: *uzi açaquet* (1633).

Sintaxiari dagokionez, erlatiboetan *-an* erabiltzen da: *erdiçen çarana* (1608). Bestalde, ez da Linschmann-Aresti legea betetzen: *ene anayari bere asentutic lequ eguioçu*

(1569), *Nola errecebitu dun orlaco jauna hire gorpussean* (1608). Azkenik, bereziki interesgarria da *bete eta* (1633) egitura, gramatikalizazioaren tarteko urratsa erakusten duelako: *eta* osorik agertzen den arren, ez dago juntaduraren bigarren osagairik; gaztelaniazko *lleno* partizipioaren ordain gisa agertzen da.

Lexiko aldetik, goi-nafarreraz ohikoa den *becalacoas* (1608) aldaera herskariduna agertzen da. Bestalde, *arrobasen* (1608) adibidean dakusagunez, *arrobatu* 'lapurtu' aditza erabiltzen da. *Tripazayac* (1677) hitzaren lehen agerraldia dela dirudi, eta *OEH*ren arabera Gipuzkoakoa da hitza. Dena den, Nafarroan *tripazai* biraoa jaso dute Goizuetan, Iturenen eta Leitzan Salaberrik eta Zubirik (2007: 103). Halaber, ez dute tradizio zaharra *humeguile* (1608) eta *ichuraguille* (1633) hitzek ere. Bestalde, *oquelu* (1608) agertzen da; testuinguruagatik ez da erraza esanahia interpretatzen, baina Landuccik ere badakar hitz hori 'rincón' adierarekin (ik., halaber, *OEH* s.v. *ukuilu*). Aipagarri da *lequ eguioçu* (1569) adibideko 'leku egin' aditza; 'alde egin' edo 'lekua utzi' esan nahi du. Bestalde, *beguira euqueçu* adibideek erakusten dutenez, *begira edun* aditz lokuzioa erabiltzen da, 1609ko Ezkurraren olerkian bezala (§ 2.2.14.1). Ezkurrako 1569ko *achegina çeagoc* hori ironikoa dela dirudi; *OEH*n (s.v. *atsegin*) *atsegin egon* ironikoaren Larraungo adibide batzuk agertzen dira —Orixek jasoak—. Hitz-elkartu konplexu bat dugu Goizuetan: *fama gayzto emallea* (1633). Amaitzeko *hiduricaceco* (1608) agertzen da 'itxura egin' esanahiarekin.

### *2.2.8.4. Larraun*

Larraungo lekukotasun hauek guztiak Maiorak (2011: 43, 48-49, 128-129 eta 141-142) eman zituen ezagutzera lehen aldiz. XVI eta XVII. mendekoak dira, eta Lekunberri, Gorriti, Iribas, Etxarri eta Baraibar herrietan izandako gertakarien ondorioz irekitako auzi-paperetan daude. Iruñeko Artxibo Nagusian dauden jatorrizkoak ikusteko parada izan dugunez, horietan oinarritu gara gure edizioa egiteko.

#### *2.2.8.4.1. Testuak*

a) Lekunberri, 1551; NAN 86179.

> <39v> […] el dicho Miguel Martínez dixo «mienten vuestras tocas debaxo de la barba», deziéndole: *Gueçurra*[203] *dion ire musu aubecotic*.[204] Y en esto, la dicha María de Eraso le respondió en bascuence: *Ene asabac ire asaba mantenacen cian*,[205] que quiere decir: «mis visagüelos a buestro bisagüelos los solían mantener».

b) Gorriti, 1554; NAN 941.

> <7r> […] que el dicho Martixa tenía una espada en la una mano y se puso con la espada deziendo en bascuence: *Çoaz, çoaz*.
>
> <16r> […] y el dicho Carrión fue a tomar uno de los dichos machos y el dicho Joanes dio bozes deziendo: *Senarrari porchara, neurehan porcha eguiten deraut*.

---

[203] gueçurra] esk. *gueçuRa*.
[204] aubecotic] esk. *aubecotic* : M *anbecotic*.
[205] cian] esk. *ciã* : M *cia*.

<26r> […] hombres y mugeres dieron vozes deziendo: *Senarraren porchara* y «ayuda, ayuda» y otras semejantes palabras.

<28v> […] y donde dixo el dicho su marido: *Senarraren porchara*.

<33v> […] vio dar vozes ad algunas mugeres del lugar o ad algún hombre o a otra persona deziendo: *Senarraren porchara* o otras palabras semejantes.

<34r> Vido este testigo que daban vozes deziendo: *Gora, gora, senarraren porchara galdu gara, guiçonec*[206] *helcarr ilçen dute*.

<75r> Johanes dio vozes deziendo: *Senarrari porchara, neureau borcha eguiten didate*.

c) Etxarri, 1614; NAN 163163.

<4bisv> […] dixo que una res o carnero llebaba, deziendo en bascuence con estas palabras: *Aracaya dacarra*.

<5v> […] y este testigo dixo que'l acusado llebaba una res, dezíendolo en bascuence: *Aracay bat dacarrela*.[207]

<32v> […] visto que'l dicho hijo de los quexantes la trataba mal dixo llorando «hijo de brujo», por otro nombre en bascuence: *Sorguin semea*.

<33r> […] y la quexante dixo a la acussada en voz alta y en bascuence: *Araunça*[208] *vidalduena,*[209] *nora bidaldu ue?*[210] Y la acussada le respondió: *çer vidaldu nic?*[211] Y la quexante le dixo: *bidaldu uena?*[212] Y la acussada le respondió *sugue edosquiçalea*, que bueltas en castellano quieren dezir «aquello que embiastes a donde lo enbiastes?» Y la respuesta que es «lo que embie?» y el segundo concepto quiere dezir «culebra chupadora».

<34v> […] que dixo la dicha Catalina de Echarri acussada semejantes qu'estas palabras en bascuence: *Erre, erre bear dun eure*[213] *lagunequin*, que en castellano quieren dezir «quemar, quemar tienes con otros compañeros».

<48r> […] dixo la niña llorando: «Brujo, hijo de bruxo! Quieres matar a mi madre», y en bascuence: *Sorguina, sorguin semea! Nay duc*[214] *hene amori hil*.

d) Baraibar, 1649; NAN 202770.

<3v> […] y el acussado le dixo al dicho Pedro estas raçones: *Norq sarcen çaytu, Echarrico ladronen gaistamandero?* […] y Lope de Varaivar fuele preguntado: «Diga qué quiere decir la palabra *gaistamandero*». Y respondió que no lo save. Fuele preguntado qué sentido da a la dicha palabra y respondió que tampoco save qué sendido darle, si no es el que quiere decir.

<6r> […] y a esto el acusado dixo esta raçón: *Echarrin ladronaq çare*, que quiere decir en romance: «Ladrones sois en Echarri.»

---

206 guiçonec] esk. *guiçonec* : M *guyconaz*.

207 dacarrela] esk. *dacarela*.

208 araunça] esk. *araunça* : M *arauça*.

209 vidalduena] dirudienez, *vidaldu uena* ulertu behar da, aurrerago datorren bezala.

210 bidaldu ue] esk. *bidaldu ue* : M *bidal ducue*.

211 vidaldu nic] irakurketa ez da ziurra bukaeran; M *vidal chimec*.

212 bidaldu uena] esk. *bidalduuena* : M *bida duena*.

213 eure] esk. *Eure* : M *cure*.

214 nay duc] aurretik zerbait tatxaturik, dirudienez, *naduc*.

<10r> […] le dixo el acusado al dicho Aresorena esta raçón: *Norq sarzen çaytu Echarrico ladronen gayztamandero*? Y repreguntándole qué quiere decir *gayztamandero*, dice que no lo save. Y repreguntándole qué sentido da a esta raçón, dice que no save, si no es el querer decir «favorecedor de ladrones» […] y el 3º dice que le dixo *Echarrin ladronaq çare*, que quiere decir «ladrones sois en Echarri». […] y el 5º dice que dixo el acusado esta raçón: *Echarrin ladronaq dire eta aeq eraman dizquidate, duda vague, eze*[215] *veorraq eztire bere buruz joan*, que a mi sentir quiere decir: «Ladrones hay en Echarri y ellos sin duda me han llevado mis yegoas, que ellas no han hido por sí».

<18r> […] que se afirma y ratifica por ser la verdad que el disculpante dixo, en audiencia pública al dueño de la cassa de Ansorena de el dicho lugar de Echarri, esta raçón: *Echarrin ladronaq çare*, que quiere decir en romance: «Ladrones sois en Echarri.»

*2.2.8.4.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, azpimarratzekoa da *helcarr* (1554) adibidean <qu> erabiltzen dela <a> bokalaren aurretik, eta hitzaren amaieran <q>: *ladronaq*, *norq*, *aeq*, *beorraq* (1649). Inoiz <h> espletiborik ere bada: *helcarr* (1554), *hene* (1614) eta ziurrenik baita *hil* (1614) ere.

Fonologia aldetik, maileguetan, goi-nafarreraz ohi denez, *-on* mantentzen da: *ladronen*, *ladronaq* (1649).

Izen morfologiaz den bezainbatez, *ene* (1551) eta *hene* (1614) izenordain posesibo zaharra ageri da. Bestalde, hirugarren graduko erakuslea *aeq* (1649) da; eta bigarren graduko artikulu hurbila agertzen da: *hene amori* (1614). Horiezaz landara, hurbiltze adlatiboan *-rauntza* erabiltzen da: *araunça* (1614). Instrumentalean bizkarkaria dugu: *guisonaz* (1554).

Aditz morfologian, jokatu gabeen artean *bidaldu* (1614) partizipio berria dugu. Jokatuetan, aldiz, zenbait aditz trinko ageri dira: **io* zaharraren *dion* (1551) eta *joan* aditzaren *çoaz*; *ekarri* aditzaren orainaldiko hirugarren pertsona singularreko adizkitzat *dacarra* (1614) agertzen da. Horiezaz gain, *izan* aditzarekin orainaldian erroa *-a-* da: *gara* (1554), *çare* ‘zarete’ (1649), eta hirugarren pertsona pluralean *dire* (1649) erabiltzen da. **Edun* aditzari dagokionez, erroa *-u-* da orainaldiko adizkietan: *dun*, *duc* (1614). Pluralgileei dagokienez, *-te* erabiltzen da **edun* eta *-i(n)-* aditzekin ergatiboarekin: *dute* (1554), *dizquidate* (1649). Aitzitik, *izan* aditzarekin pluralgiletzat *-e* mantentzen da: *çare* (1649). Hitanoko adizkiak badira testuan: *dion*, *cian* (1551), *dun*, *duc*, *uena*, *ue* (1614). Azken adibide horretan iraganeko *-n* falta dela dirudi, baina ez, haatik, *cian* (1551) adibidean. Indikatiboko NOR-NORI-NORK sailean *-i(n)-* erroa eta **eradun* agertzen dira: *dizquidate* (1649), *eguiten deraut* (1554). Ohart gaitezen, Gorritiko lekukotasun berean, *deraut* eta *didate* (1554) biak agertzen direla.

Sintaxi aldetik, oro har, Linschmann-Aresti legea betetzen da: *Ene asabac ire asaba mantenacen cian* (1551) eta *erre bear dun eure lagunequin* (1614); bi horietan gardena da posesibo indartu eta indartugabeen banaketa; baina Lekunberriko leku-

[215] eze] esk. *eze* : M *ezc.*

kotasun berean *gueçurra dion ire musu aubecotic* (1551) dugu, posesibo arruntarekin, erregela haren arabera indartua behar lukeen arren. Horrezaz landara, hurrenkera dela eta azpimarratzekoa bide *musu aubecotic* (1551), bertan izena ezkerrean agertzen baita. Amaitzeko, *bere buruz* (1649) egitura agertzen da, 'bere kabuz' esanahiarekin. *OEH*ren arabera (s.v. *buruz*), Hegoaldean nagusiki xviii. mendearen erdialdetik aurrera ageri da; lekukotasun hori, ordea, mendebete lehenagokoa da. Perpaus bihurkarietan *helcarr ilçen dute* ageri da (1554).

Lexiko aldetik, *mantenacen* (1551) eta *aracay* (1614) aldaerak erabiltzen dira. Bestalde, *asaba* (1551) agertzen da, *OEH*ren arabera *RS*n agertzen da *asaba* lehen aldiz; lekukotasun horrekin berrogei bat urte aurrera genezake lehen agerraldia. Nolanahi ere, *OEH*n 'aitona-amonak' eta 'arbaso' zentzuak ematen dira; lekukotasun honetan, ordea, 'birraitona-birramona' esanahia luke, itzulpenaren arabera beti ere. Bestalde, Gorritiko 1554ko lekukotasunean agertzen diren *senarrari porchara* eta *senarraren porchara* esapideetan, badirudi 'senarraren borondatearen aurka' edo antzeko zerbait ulertu beharko litzatekeela, *bortxa* hitzaren aldaera gisa; gainera, *borcha* ere agertzen da agiri berean. 1577ko Berako prozesu batean *senarazi borchara* —ziurrenik, *senarrari borchara*— dakar Idoatek (1978: 232; ik., halaber, Sarasola *ConTAV* 5.2.4). Dena den, testuinguru aldetik ezin jakin esanahia garbi. Aipagarri dakusagu, halaber, Baraibarren 1649an agertzen den *gaistamandero* & *gayztamandero* hitza, dakigula orain arte ez baita dokumentatu. Agirian ikusten denez, lekukoak ez daki zehatz zein den hitzaren esanahia: «repreguntándole qué quiere decir *gayztamandero*, dice que no lo save. Y repreguntándole qué sentido da a esta raçón, dice que no save, si no es el quiere decir favorecedor de ladrones». Ricardo Gómezek proposatu digunaren arabera, hitzaren bigarren osagaia *mandero* < *bandero* izan liteke (ik. *OEH* s.v. *bandera* 3. adiera). *DAut1770*-n *bandero* hitza *banderizo*-ren sinonimotzat hartzen da, eta azken honen definizioa hauxe da (*DAut*, s.v. *banderizo*): «El que hace parcialidad ò bando, ò le sigue». Adiera hori nahiko ondo ezkontzen da lekukoak esandakoarekin. Atzizkien emankortasunaren aldetik, aipagarri da *edosquiçalea* (1614). Azkenik, *aubecotic* (1551) dugu; 1529ko Iruñeko lekukotasun batean ere agertzen da. Beharbada 'ahobeko' izan daiteke etimologia, kontuan izanik gaztelaniaz 'debaxo de la barba' dela itzulpena.

*2.2.8.5. Araitz-Betelu*

Araitz-Beteluko bi herritako hiru lekukotasun ditugu oraingoan. Lehena eta zaharrena, xvi. mendekoa, Arribekoa da. Maiora (2011: 56-57) izan da argitaratu duen lehena. Azken biak, ordea, Intza herrikoak dira, eta 1610 eta 1611n jarri ziren idatziz. Idoatek (1978) jaso zituen eta, ondoren, Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.4) eman zituen berriro. Hirurak daude Iruñean, baina lehena Artxibo Nagusian eta Intzako biak Iruñeko Elizbarrutiko artxiboko agirietan daude eta sorginkeria dela-eta irekitako prozesuetan agertzen dira.

Esaldi hauek jasotzen dituzten prozesuak zuzenean ikusteko aukera izan dugu, eta berorietan oinarritu gara gure edizioa prestatzeko.

*2.2.8.5.1. Testuak*

a) Arribe, 1564; NAN 211356.

> <5v> […] las dichas madre e hija dixeron al acusado a alta voz y alterada: *Hi ayz hayta juramentu gayztoguillearen semea, eta*[216] *ayta heurea nor duan eztaquic*, que es tanto como si dixese «tú heres hijo de un padre perjuro o ussado a perjurar, y a una qu'él no saves si hera tu padre o no», dando a entender que su madre avía sido adúltera.
>
> Ytem que a esto el acussado, con toda templança y moderadamente, le abría respondido y satisfecho a la dicha Bárbara y a las palabras precedentes por ella dichas: *Çu eçara çeure aytaren alava*, que hera tanto como si dixera «vos no soys hija de vuestro padre»; es, a saver, «no soys hija de vuestro padre en las costumbres», que esto se suele dezir por encarecer la vondad de los padres a la falta de los hijos, sin injuria dellas por estilo en bascuence y romance.

b) Intza, 1610; IEA C434, 20 zb.; 114 bis dokumentua.

> <16v> […] y dixo en bascuence al dicho Micheto Usabarrena semejantes palabras: *Micheto, veguirayçu çer ari çaren. Sorgina çarela esaten badeçu, erreco çaitue*. Tanto como dezir: «Mirad lo que hazes, que si desís que sois brujo os quemarán».

c) Intza, 1611; IEA C434, 20 zb.; 115 bis dokumentua.

> <22r> […] el qual dixo en vascuence al dicho Martín de Varaçarte: *Martin, ni here vanayçala esaten due. Ni vanayz*. Y el dicho Martín de Varaçarte respondió también: *Nic eztaquit,* <22v> *jauna, nic*[217] *icusçi ezaytud*, que en castellano fue tanto como dezir el dicho abbadde Errazquin al dicho Martín de Varaçarte: «Martín, yo también dizen que soy, soy yo». Él respondió: «No sé, señor, yo no os he visto».

*2.2.8.5.2. Iruzkina*

Grafian, ez da txistukari afrikaturik markatzen: *eçara* (1564), *ezaytud* (1611). Behin <sç> erabiltzen da behin: *icusçi* (1611). Bestalde, esaldietan agertzen diren <h> batzuk espletiboak dirateke, *hayta* (1564) kasu. Beste zenbaitekin, aldiz, kokagunea dela eta, zalantza izan dezakegu hasperena ote den: *hi*, *heurea* (1564).

Izen morfologian, *heurea*, *çeure* (1564) gisako izenordain indartuak ditugu. Bestalde, aditzen artean, *izan* aditzaren erroa *-a-* da: *çara* (1564), *çaren*, *çarela* (1610). Eta **edun* aditzarena *-e-* da: *badeçu* (1610). Hitanoko formak agertzen dira: *duan*, *eztaquic* (1564). Bestalde, *begiratu* aditzaren aginterazko trinkoa bide da *veguirayçu* (1610). Dena den, *begira egin* aditz lokuzioa egon daiteke hor eta, beraz, «begira egizu» genuke. Pluralgileei dagokienez, *-e* mantentzen da **edun*-en adizkietan: *çaitue* (1610), *due* (1611). Aditzen artean, aipagarria da Intzako 1611ko lekukotasunean agertzen den *ezaytud*, bukaeran herskari ahostuna baitu.

---

[216] eta] esk. *Et*.
[217] nic] esk. *ni*.

Sintaxi aldetik, *nic icusçi ezaytud* (1611) perpausean ezeztapenaren hurrenkera zaharra agertzen da. Gainera, *ayta heurea* egituran posesiboa izenaren eskuinean dago. Bestalde, konpletiboetan *-ala* atzizkia daukagu birritan: *vanaiçala*, *vanayçala* (1611). Halere, erlatibozkoan *-en* agertzen da: *çer ari çaren* (1610). Azkenik, Linschmann-Aresti legeari dagokionez, bi adibideetan betetzen da: *Ayta heurea nor duan eztaquic*, *çu eçara çeure aytaren alava* (1564).

Lexikoari dagokionez, *esaten* (1610) aldaera erabiltzen da, Nafarroako ipar mendebaldeko eskualde batzuetan ohi den bezala. Gainera, *OEH*ren arabera tradizio sakona ez duen *gayztoguille* (1564) agertzen da. *OEH*ren arabera 'gaiztagile' erabili zuen lehena Larramendi izan zen; beraz, ia bi mendez aurreratu daiteke hitzaren lehen agerraldia. Amaitzeko, hitz elkartu konplexua dugu: *hayta juramentu gayztogille* (1564).

### *2.2.8.6. Sakana*

Sakanakoak dira jarraian datozen lekukotasunak. Lehena 1597koa da, Urdiaingoa, eta Santaziliak (2018) aztertu eta eman du ezagutzera lehengoz. Bigarrena, ordea, 1619koa da eta Hiriberri Arakilgo Martin Ureta notarioaren inbentarioan agertu zen; Maiorak (2011: 132) eman zuen ezagutzera lehendabizikoz. Izatez, Nafarroako Artxibo Nagusian daude biak; aurrenekoaren jatorrizkoa ikusteko aukera izan dugu, baina ezin izan dugu prozesua bera ikusi.

Hirugarren lekukotasuna Burundako alkatearen eta Altsasuko bikarioaren artean 1648an izandako auzi agirian agertzen diren esaldiak dira. Erdoziak (2005) eman zituen ezagutzera, edizio paleografikoan. Saio hartan, Erdoziak Burundako egungo euskararekin konparatzen du lekukotasuneko euskara.

Dirudienez, jatorrizkoa ez dago egoera onean eta ez dugu esku artean izateko aukera izan. Dena dela, Erdoziak orrialde zenbakiak eman zituenez, Iruñeko Artxibo Nagusian eskatuta digitalizaturik ikusteko aukera izan dugu. Bi orrialde, 14 eta 224, ezin izan ditugu ikusi, Erdoziak zenbaki horiek eman arren, orrialde horietan ez baitugu aurkitu lekukotasunik. Daitekeena da Erdoziak 14 eta 224 bezala eman zituenak 14v eta 224v izatea.

#### *2.2.8.6.1. Testuak*

a) Urdiain, 1597, NAN 12756.

> <87r> [...] en bascuence: *Ay! gora, gora, gendeac! Yl dute hene senarra!* Que quiere dezir: «Sallid, señores, que matan a mi marido.»

b) Hiriberri Arakil, 1619; NAN PN C-2316/6.

> *Jos goseac nagoanean, yaten diat otasa, ect duct izeguin, jauna.*

c) Altsasu/Burunda, c. 1648; NAN 102812.

> <9r> [...] y en lengua bascongada y con el mismo estilo le respondió: «Con vos», que en bascuenze se dize: *Çurequi*.
>
> <14> [...] y que el acusado respondió por el mismo tono que «ay, no hablo con vos», que en lengua bascongada le dixo: *Çurequi*.

<18v> […] y el dicho acussado le respondió: «De padre más honrrado que tú», que en bascuenze le llamava: *I baño guizon prestuagoren semea*.

<40v> […] le respondió: «Benga, sáqueme», que en lengua bascongada le dixo: *Çatoz,*[218] *ceurq atera naçaçu*.

<46r> […] le respondió al quexante: «Bení vos y sacadme», que en lengua bascongada le dixo: *Çatoz eta suc atera naçaçu*.

<54r> […] y al abbad le respondó el dicho acusado: «¿Quién os mete en esso?», que en lengua bascongada le dixo: *Norq sarçen çaitu ortan?*

<66v> […] el dicho acussado le replicó que «ay, que havéis engañado vos de un tuerto a un concejo como el de este lugar. Y vos le havíais de engañar de esta manera», que en lengua bascongada le dezía estas raçones: *Çuc engañatu bear duçu auçoa*. Y el dicho quexante le respondió que él no havía engañado al concejo ni a nadie.

<73v> […] los jurados an dado abisso para que se juntasen los vecinos y vos de un tuerto: «Nos abéis engañado a todos», que en bascuence le decía: *Çuc engañatu gaituçu guztioc*.

<74v> […] y dijo: «Saquen ese ombre de la iglessia», y que el acusado aciéndose dueño de la razón dijo: «Benga y sáqueme», el que en lengua bascongada le dijo: *Çatoz eta atera naçazu çuc*.

<93v> […] dixo el dicho quexante: «¿Savéis hijo de quién sois?». Y que el disculpante le respondió: «Yo soy hijo de D. Miguel Fernández de Garayalde y Lazcano, hijo de padre más honrado que vuestra merced», que en lengua bascongada dixo: *Ni naiz çu baño guiçon honrraduagoaren semea.*[219]

<103r> María Ramos de Arramendia, muger de Juan de Gainza y sobrina del quexante, dixo al disculpante a malo, ablando en defensa del dicho quexante: «Como a este le falta un ojo, te salten a tú los dos de un bellaco», que en lengua bascongada le dezía: *a gauza gaistoa*.

<221v> […] este pleito fue en lengua bascongada y se hablaron en bascuenz y con la palabra *çuc* y no con la de «vos» como está escrita a la quinta pregunta, porque no hablaron en castellano. Y en la dicha palabra *çuc*, en este dicho lugar de Alsasua y valle de Burunda la tienen por palabra cortés y bien recuerda entre [..] «vos», del qual ussan con amistad, sin que se den por offendidos ni que sea palabra descortés. Si bien para ablar con los sacerdotes y otras perssonas de respecto se le añade el decir *çure*[220] *mersedea* u *orre mersedea*. Y otras vezes juegan desta palabra: *Çuc, jauna*, <222r> que según suena quiere decir «vuestra merced señor».

<224> […] el dicho alcalde ablando en esta forma: *Eman duçu herrecaytu ura*, qu'en castellano quiere decir: «Ha dado aquel recado» […]. *Çer da orr? Çer da orr?*, que quiere decir en castellano: «¿Qué ay aý?, ¿Qué ay aý?».

<225r> […] oyó cómo el dicho presentante abló estas palabras ablando, con la parte cantada *çer da orr? Çer da orr*, que quiere decir en castellano: «¿Qué ay aý?, ¿Qué ay aý?». Esta dicha parte cantó. Respondió en la misma

[218] çatoz] esk. *catoz*.
[219] semea] esk. *sema*.
[220] çure] esk. *cure*.

forma y con las mismas palabras, y como en cólera disso: *Valgame Dios, onlaco egun batean dagola Alsasuco auzoa proçesio gave*, que quiere decir en castellano: «Válgame Dios, que un lugar como el de Alsasua o concejo quede sin procesión un día como este». A que el dicho abbad presentante respondió en lengua bascongada estas palabras: *Usdaçu neure baquean Jangoycoaren amoreagatic!*, que quiere decir: «Déjeme en paz, por amor de Dios». Y la parte contraria dijo: *Oquerr orrec onlaco auzo honrratu bat uzi dezala procesioric gave onlaco egun batean*, que quiere decir que «esse tuerto deje sin procesión a un concejo <225v> tan honrrado un día como el de oy». Repitiendo la dicha palabra «tuerto», ha que respondió el dicho abbad presentante en esta forma: *Ayn çhuzena nayz ni nola zu, etta çu noren semea zara?*, que quiere decir según suena: «Tan drecho soy como él, y ¿Él hijo de quién es?», a lo que respondió el acusado: *Hayn ayta honrratuaren umea nayz, nola çu*, que quiere decir «Tan hijo de padre honrado soy como él». Según parece que suena la dicha palabra *çuc*, y no de «vos» como está escrita. Y passó en esta forma y quisso decir lo sobredicho en la dicha pregunta su deposición, y se deve entender assí desde las dichas palabras, porque la palabra *çuc* entende este uso conforme la costumbre que se tiene en este dicho lugar y otras partes del valle de Burunda.

<228r> […] y con estas palabras: *Bellaco oquerr onec engaña deçala erri au, ni etta guztioc manera ontan, eta uzi dadila eguiteco proçesioa*, que quiere decir según su sentido y lo que las palabras suenan: <228v> «que este bellaco tuerto engañe al lugar, a mí y a sus vezinos desta suerte y que se deje de hazer la procesión». Y que, haviendo oído el dicho abbad presentante las dichas palabras, dijo ablando con la parte contraria: *Çer da? Çer da?*, que quiere decir: «¿Qué ay? ¿Qué ay?». Ha que respondió: *Çurequi, bellaco oquerr orrequi, dearducat*, que con este lenguaje y palabra de *çuc* le trato al dicho abbad. Y él también le respondió y no con la palabra «vos», que está escrita en la dicha depossición, y siente este testigo que la palabra *çuc* no quiere decir «vos», como suena en ella, porque en este dicho lugar de Alsasua y los demás del valle de Burunda se tratan comúnmente assí entre deudos como hamigos y otras personas de respecto con la dicha palabra de *çuc*, sin que se tenga por agravio ni descortesía, sino que cuando quieren ablar con más cortesía ha algún forastero y ha sacerdotes añaden *çure mersedea*, que quiere decir «vuestra merced».

<230r> Y entrando por el coro algo alborotado y colérico, dijo estas razones: *Nor nayz ni?*, ablando con el dicho abbad, que quiere decir en castellano «¿Quién soy yo?», a lo cual le respondió: *Çu çara alcatea*, que quiere dezir en lengua castellana «es el alcalde». La parte contraria replicó: *Nor da alcatea?*

<232r> […] el dicho acussado con estas palabras de *çuc,* <232v> *hoquerrorreq*. Y eso con la palabra «vos» y como esta escrita por haversse hablado siempre en bascuenz.

<234v> Dijo la parte contraria al presentante: «Venid vos y sacadme», que en lengua bascongada le dijo: *Zatoz eta zuc atra naçazu*.[221] Fueron las palabras formales con que el dicho acusado abló al dicho abbad, la cual en su sentir

[221] naçazu] esk. *nacazu*.

deste testigo no quiere decir «vos», por cuanto la palabra *çuc* es común y palabra de que todos en este dicho lugar ussan entre los más amigos y familiares, y es admitida por usual sin que se ofenda nadie por ella, excepto que con los sacerdotes y otras personas menos tratadas no se usa, sino que se dice y abla con ellos de la palabra *çure merçedea* o *orremercedea*.

<237v> […] que dicen en lengua bascongada: *Çatoz, çeurc atra nazazu*. No es palabra descortés; antes bien, es palabra de que <238r> ordenariamente se tratan los vezinos, amigos y deudos en amistad y cortesía, sin que hayan tenido ni tengan por agravio, y que el aberle dicho el acusado al presentante, estando en el altar, la palabra *çatoz, çeurq atra nazazu*, fue decir que «fuese y que él mismo le sacase».

<240v> […]fueron en esta forma después de aver dicho el dicho presentante que callasen a los que ablavan, diciendo[222] estas palabras: *Atra zaçue guiçon ori elizatiq*,[223] que quiere decir: «Saquen esse hombre de la iglessia». A lo cual respondió la parte contraria, dándose por entendido: *Zatoz zu etta atra nazazu*, que según suena quiere decir: «Venga vos y sáqueme».

<241r> […] siempre se les dice *vere mersedea* o *çure mersedea*, y que alguna vez, siendo amigos los sacerdotes y seculares, se tratan con la palabra *çu* solamente unos a otros con amistad.

<246v> […] respondiendo a lo que dijo el presentante, estando deciendo misa el día que refiere aquella, tales palabras: *Çuc atera bear dituçu*. En este lenguaje, como esta escrito, se a de entender assí, y no con las palabras «sacaldos vos que os toca», como también se alla escrito en la dicha pregunta de posición, porque la dicha palabra *çuc* siente este testigo que no quiere decir «de vos», por cuanto ussan della comúnmente entre los vezinos, deudos y amigos por palabra entre ellos cortés y de amistad. Y tal se acostumbra en todo este valle de Burunda sin que les parezía ablarse con ella con descortesía, sino que está la dicha palabra *çuc* admitida. Y bien recuerda, y que para hablar con más cortesía, assí con los sacerdotes como con otras personas de respecto a la dicha palabra *çuc* le añaden *jauna*, que quiere decir «vuestra merced, señor», y que en la dicha ocassión faltó la parte contraria en no decirle *zuc jauna*, para que se hablara con toda la cortesía y reberencia que se deve al estado sacerdotal.

<249v> […] respondió en esta forma ablando entre el acusado y dicho regidor y este testigo, que estavan solos y en distancia de cinco o seis pasos donde estava paseándose el dicho abbad a la puerta de su casa: *Engañatuco gaytu biarr here egun bezala*, que quiere decir: «Mañana nos engañará como oy». Y que, haviendo oído la dicha razón, el presentante salió a decir esta palabra: *Çer da? Cer da?*, que quiere decir «¿Qué ay?, ¿Qué ay?». A la cual el acusado respondió, también en bascuenz, semejante palabra: «¿Qué ay?, ¿Qué ay?». Y el presentante respondió: *Ni neure atarian nago*, que quiere decir: «yo estoy en mi puerta».

---

222 diciendo] aurretik tatxaturik euskarazko esaldi hau dago: *zatoz zu etta atra nazazu*.
223 elizatiq] lerro honen eta azpikoaren artean, baina ezkerreko ertzean *elizatiq* dago idatzia.

<250r> El dicho acusado dijo estas palabras: *Oquerr orrec engaña dezela auzo au eta vezinoac*, que quiere decir: «Este tuerto engañe este concejo y sus vezinos». Y el presentante le respondió: *chuçenago naiz zu bayno, eta zu noren semea çara?*, que quiere decir en lengua castellana: «Más drecho soy que el», y «¿Hijo de quién es?» A que respondió el dicho acusado: *Ni nayz ayn ayta honrratuaren umea, nola zu.* Ablando siempre el uno al otro con la palabra *çuc*,[224] la cual según la costumbre del dicho lugar y valle es palabra cortés entre los vezinos y de la que comúnmente ussan, y la tienen por familiar entre los amigos y deudos, usando della por cortés si bien para mayor cortesía ablando con personas de respecto y sacerdotes añaden a la dicha palabra *çuc, çure merçedea*[225] o *bere mersedea,* y otras veces *jauna*.

<256r> […] le respondió allá el presentante en semejantes palabras: *Çu noren semea çara?*, a que le respondió en lengua bascongada.

<259r> […] donde dice «¿Quién os mete en esso?», que en lengua bascongada está escrita: *Norc sarçen çaytu*[226] *ortan?* […]Y que assí, en la ocasión que refieren, aquella faltó el acusado en no decir *çu,*[227] *jauna, norc sarçen çaytu*,[228] para que le tratara con toda atención y cortesía.

<262r> *Juramento gayztoa eguin duçula eta pagatucoytuzula*, que según suena quiere decir que esta que depone havía jurado mal o echo mal juramento y que los pagaría.

<266v> […] contestó que, a la quinta pregunta, donde dice que refiere las palabras de tuerto con que el acusado le trató al presentante y él le respondió, fue todo en lengua bascongada y con esta palabra: *Çuc, oquerr orrec*, sin añadir la palabra *jauna*, que es la cortesía con que se trata y abla a los sacerdotes y otras personas de respecto.

<270r> […] semejantes palabras en lengua bascongada: *Atra eçaçue guiçon ori*, sin nombrar el sujeto, que según suena quiere decir: «Saquen esse hombre de aí». […] que dijo en lengua bascongada ablando con el presentante en alta voz: *Çeurc atraça[çu]*.[229]

<274bisv> […] lo trató de tuerto repetiendo la palabra «tuerto» con cólera y enfado, aunque en lengua bascongada, y deciendo: *Oquerr onec engaña deçala*[230] *onlaco auzo bat*, que según suena quiere decir en lenguaje castellano: «Que este tuerto engañe a un concejo».

<275r> […] oyó cómo dijo estas palabras en lengua bascongada: *Ori esta Arramendia, bayzic Yaurtia*, que según suena quiere decir: «Esse no es Arramendia, sino Yaurtia».

<282v> […] y entrando en él algo alborotado comenzó a decir en lengua bascongada al dicho presentante semejantes palabras: *Ni nor naiz?*, teniendo

---

[224] çuc] esk. *cuc*.
[225] çuc, çure merçedea] esk. *cuc, cure merçedea*.
[226] çaytu] esk. *caytu*.
[227] çu] jarraian ezabaturik <c>.
[228] çaytu] esk. *caytu*.
[229] atraçaçu] orriaren egoeragatik, ez da ondo ikusten azken silaba.
[230] deçala] esk. *decala*.

un papel en la mano, que quiere en decir en castellano: «¿Yo quién soy?». Ha que le respondió: *Çu alcatea*, que quiere decir «el alcalde». Y ha esto replicó: *Nor da alcatea?*, que quiere decir «¿Quién es el alcalde?».

<288v> […] ha que respondió el dicho enfermo, según se le reduce al que depone a la memoria, estas palabras: *Bay bay*, *valgame Dios, ongui da*. Las cuales le parece las dijo assí, que quieren decir: «Sí sí, válgame Dios, bien está».

<299bisr> […] y oyó le dijo «ladrón» con semejantes palabras en bascuenz: *Ori da*[231] *puta baten semea, lapur*[232] *semea*, que según suena quiere decir: «esse es hijo de puta y de ladrón».

<301v> […] donde dice al segundo artículo semejantes palabras: *Ni nayz çu baño ayta honrratuagoren semea*, que en lengua castellana quiere decir según su sentir: «Soy hijo de padre más honrrado que vuestra merced».

<302r> […] que no las dijo como se hallan escritas, sino en esta forma: *Çu bezayn ayta honrratuaren semea*, que quiere decir «Hijo de padre tan horrado».

*2.2.8.6.2. Iruzkina*

Grafiari dagokionez, hitz amaierako herskaria islatzeko <c> eta <q> erabiltzen dira: *ceurq* (40v, 237v), *norq* (54r), *Elizatiq* (240v), baina *suc* (46r). Zenbaitetan, <h> etimologikoa agertzen den arren —*honrratuagoren* <301v>, *honrratuaren* <302r>— espletiborik ere bada: *herrecaytu* (224), *hayn* (225v), *hoquerr* (232v), *here* (249v).

Fonologia aldetik, bokalekin sinkopa gertatzen da: *onlaco* (*passim*), *atra* (*passim*), baina *atera* (*passim*). Bestalde, **j-* zaharraren ahoskera sabaikaria da agidanez: *yaten* (Hiriberri, 1619), *Yaurtia* (275r). Halere, zalantza izan dezakegu Urdiaingo *gendeac* (1597) adibidearekin. Horrezaz gainera, diptongo ondoren behinik behin, sudurkaria sabaikaritu egiten da: *baño* (*passim*). Dena dela, *bayno* (250r) ere badugu eta ezin jakin hor sabaikaria den. Sabaikaritze adierazkorraren adibide dateke ondokoa: *chuçenago* (250r). Oro har, ez dago txistukarien neutralizaziorik, baina behin *suc* (46r) dago; aldiz, *zuc* eta *çuc* maiz agertzen dira. Kontu grafikoa dirudi.

Morfologiari dagokionez, artikulu hurbila daukagu lekukotasun hauetan: *guztioc* (73v), *gustioc* (228r), *hoquerrorreq* (232r). Izenordain indartuetan, *ceurq* (40), *çeurc*, *çeurq* (237v) aldaera zaharra agertzen da. Izenordain posesiboez den bezainbatez, *neure* (225r) dago. Soziatiboan beti *-reki* lekukotzen da: *çurequi* (*passim*). Lekukotasun hauetan genitibo mugagabea erabiltzen da: *guizon prestuagoren semea* (18v), *ayta honrratuagoren semea* (301v); baina ez beti: *guiçon honrraduagoaren semea* (93v), *ayta honrratuaren semea* (302r).

Aditzetara pasatuz gero, **edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da: *duçu* (*passim*), *duçula* (262r); *-te* da pluralgilea: *dute* (1597). Bestalde, *izan* aditzarena iraganean *-e-* da erroa: *zen* (18v). Trinkoen erabilera nabarmengarri batzuk daude da: *jarduki* aditzaren indikatiboko *dearducat* (228r). Indikatibotik landa, aginteran *usdaçu* (225r) eta *çatoz* & *zatoz* (*passim*) dauzkagu eta subjuntiboan *dagola* (225r). Perifrasiei bagagozkie, indikatibotik kanpokoetan aditzoina mantentzen da *-tu*-z bukatzen direnekin, baina ez *-i*-z bukatzen direnekin: *uzi dezala* (225r), *engaña deçala* (228r), *engaña dezela*.

---

[231] da] lerro artean.
[232] lapur] aurretik bi hizki tatxaturik, badirudi <ya>.

Sintaxi aldetik, badirudi Linschmann-Aresti legea betetzen dela: *usdaçu neure baquean* (225r), *ni neure atarian nago* (249v). Bestalde, konparaziozko perpausetan *ni nayz ayn ayta honrratuaren umea, nola zu* (250r) gisako perpausa dugu.

Lexiko aldetik, *egun* (249v) agertzen da 'gaur' esanahiarekin. Bestalde, Nafarroan ohikoa denez, *atarian* (249v) 'atean' ulertu behar da; gainera, gaztelaniazko itzulpenean *puerta* dator. Halaber, goi-nafarreraz ohikoa den *otasa* (1619) ageri da. Testuetan agertzen den *oquer* (*passim*) 'betoker' zentzuan ulertu behar da, gaztelaniazko *tuerto* alegia. Bestalde, *goseac nagoanean* (1619) adibidean *goseak egon* aditz lokuzioa dugu. *OEH*ren arabera (s.v. *gose*) halako egiturak XVIII. mendetik aurrera lekukotzen dira; adibide honekin, mende bat aurreratu dugu agerraldia. Testuan *mersede* & *mercede* aldaera (*passim*) aurki daiteke; aldaera bera agertzen da Eraulgo ezkontza gonbidapenean (§ 2.2.11). Amaitzeko *herrecaytu* (224) 'enkargua' hitza aipa daiteke; Nafarroan Lizarraga Elkanokoak ere erabili zuen aldaera hori.

### *2.2.8.7. Ultzamaldea*

Ultzamakoak eta inguruko ibarretakoak dira jarraian dakartzagun XVI. eta XVII. mendeetako lekukotasunok. Lekukotasun kopuru urriagatik, multzo berean sartu ditugu Ultzamarekin muga egiten duten Anueko, Atezko, Basaburu Nagusiko eta Odietako lekukotasunak. Hortaz, ondoko herrietako lekukotasunak bildu ditugu hemen: Igoa (Basaburu Nagusia), Zenotz (Ultzama), Urritzola-Galain (Ultzama), Ostitz (Odieta), Anotzibar (Odieta), Anue, Ihaben (Basaburu Nagusia), Iraizotz (Ultzama), Olague (Anue) eta Aroztegi (Atetz). Ultzamako hiru lekukotasunak, Anuekoa eta Ostizkoa Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.4) jaso zituen, eta hark, aldi berean, Idoatek (1973, 1978) argitaratutako lekukotasunetatik hartu zituen. Lehendabizikoen kasuan, Sarasolarena da aurreneko iruzkina; aldiz, Iraizozkoari dagokionez, aurrenekoz Irigaraik (1972) eman zituen ezagutzera testuaren edizio eta faksimilea, hari Idoatek erakutsi ondoren. Geroago, Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.6) eskaini zuen bigarren edizioa, irakurketan desberdintasun txiki batzuk eginez.

Idoatek erabat zehaztu ez bazuen ere, 1576 urtea daramaten lekukotasunak (Zenotz, Urritzola-Galain eta Ostizkoak) agiri berekoak izan daitezke, hau da Nafarroako Artxibo Nagusiko 9.991 erreferentziadun prozesukoak. Eskuartean izan dugu prozesua eta hagitz prozesu potoloa da. Gainera, tamaina desberdineko orrialdez osaturiko zenbait agiri multzo ditu. Ondorioz, ezin izan ditugu lekukotasunok aurkitu eta Sarasolaren edizioan oinarritu gara gurea egiteko. Dirudienez, prozesu berean *baybada* eta *adaburu* ere lekukotzen dira (*ConTAV* § 5.2.4).

Iraizozko 1597ko lekukotasuna Idoatek Nafarroako Diputazioaren Artxiboan aurkitu zuen, baina ez zuen bestelako erreferentziarik eman. Egun ziurrenik Nafarroako Artxibo Nagusian badago ere, ez daukagu erreferentziarik eta ezin izan dugu jatorrizkoa ikusi. Areago, Peio Monteano artxiboko teknikaria lekukotasunaren bila aritu arren, hark ere ez du, tamalez, aurkitu. Beraz, gure edizioa egiteko, Irigaraik (1972: 576) argitaraturako faksimilean oinarritu gara, eta bat dator Sarasolaren irakurketarekin.

Igoako, Ihabengo, Olagueko eta Aroztegiko lekukotasunak Maiorak (2011: 60, 84, 130-131 eta 146-147) eman zituen ezagutzera, eta azken bien jatorrizkoa ikusteko aukera izan dugu. Dena den, Olagueko esaldi hori, ziurrenik, Idoatek (1978: 232) eta Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.4) emandako berbera da, nahiz eta Idoatek ez

zuen urtea zehaztu. Ihabengoaren kasuan, prozesua eskuartean izan dugu, baina mila foliotik gora ditu eta, tamalez, ez dugu euskarazko lekukotasuna aurkitu. Gainerakoen jatorrizkoak ikusi ditugu. Anotzibarkoa Idoatek (1978) jaso zuen, baina Sarasolak ez dakar *ConTAV*en. Santaziliak (2017) bildu eta iruzkindu ditu berriki Anotzibarko lekukotasun horiek.

*2.2.8.7.1. Testuak*

a) Igoa, 1565; NAN 281231.

<4v> eta <6v> […] y a esto dixo Joana Machinenecoa, que es la primera desta información, a la acusada, que es su prima, que aquella debía ser su madrastra, deziendo en bascuence: *ura ire uaçama dun*. Y a esto dixo la acusada: *Bay, eta Mari Joan here ire uazama dun.* Y que quiere dezir en romance castellano: «Vuestra madrastra es aquella». Y lo que la acusada le respondió en bascuence quiere dezir que «también es María Juan vuestra madrastra».

b) Zenotz, 1576; NAN 9.991.

[…] bio que la muger de Martín de Olagüe, dicho Serorearena, que estaba en la ventana de su casa con un mochacho, que es cabrero de casa, y que dezía: *Traydorea, erreco çara, erreco çara*, que es dezir «*traydorea*, quemaros eis».

c) Urritzola-Galain, 1576, NAN 9.991; fol. 3-4.

[…] y como la llebaba, le dezía a su dicha madre que hera bruxa, como ella, diziéndole en bascuence: *Sorginac narama eta*[233] *oray vi sorgin goaz*, que es decir «la bruxa me lleva y agora dos bruxas vamos».

d) Ostitz, 1576; NAN 9.991.

[…] *Maingui cioac ori*, que quiere decir «coxo va ese».

e) Anotzibar, 1576, NAN 69853.

<6r> (...) y le quitava la vista de los ojos diziendole: *Ene(a) ayz*.[234]

<6v> (...) y en llegando a ella le solia desçir en basquençe: *enetaco bear dun*, que quiere dezir «para mi as de ser.»

<16r> (...) y llegava ella y le travaba comunmente de la mano yzquierda deziendole: *Enea ayz*, que es dezir «mía eres.»

<48r> (...) y que los echaban al ayre deziendo: *Orye lagunac*, que es dezir «tomad, compañeros.»

f) Orokieta, 1578; NAN z.g.

<13r> (...) palabras en bascuençe: *Echecoandrea, sorguinoc orayn erre bear omen dugu*, que quieren dezir en lengua castellana, «Nuestra dueña, agora avemos de ser quemadas las bruxas.»

---

[233] eta] Sarasolak *et* dakar.

[234] enea ayz] esk. *eneayz*.

<20v> (...) y despues que tomo el vino dixo en bascuençe a la dicha Maria de Ezcurra: *Echecoandrea, sorguinoc oray herre bear omen dugu*, que quiere dezir en lengua castellana «Nuestra dueña, agora emos de ser quedamas las bruxas.»

<33r> (...) una vez le abia dichi: *Yçeba, çu ere sorguina omen çara eta aquerlarrean nola ybilten çarete*, que quiere dezir en romance: «Tía, vos también diz que soys bruxa y como soleys andar en el prado de las cabras.» (...) la dicha acusada le abía respondido que era un *erguel*.

<39r> (...) *Sorguinoc oray galdu bear omen dugu*.

g) Ihaben, 1584; NAN 70159.

[…] le dixo a este testigo: *Nic au arçen dut cageençat, gero quarterac paga ataçu*,[235] que quiere dezir: «Yo tomo este dobón por mis dietas y derechos y después pagareis los cuarteles».

h) Iraizotz, 1597; NAN.

[…] ofrecían y preferían en él ofrecer y en las demás onores de la Iglesia que dixo este testigo: *çarrac çarr*[236] *aynchu* en bascuence […]. Platicando entre ellos en bascuence las palabras siguientes: *Jayncoa laudatu dela, gure errian espaytugu pendenciaric Eliçaco gauçaetan, baycica çarrenac çarr aynchu eta ofraçen baycara*. […] bió que heran personas de fe y crédito y en bascuence, a más de ello, dixo que heran *echeco jaun prinçipalac*.

i) Olague, 1615; NAN 41511.

<4v> […] hoyó este testigo que dixo en voz alta de manera que se pudo hoír en su lengua bascongada: *Agot çiquinoc*, que buelto en castellano quieren dezir christian[os] sucios.

<6v> […] y dixo semejantes qu'estas palabras en su lengua en vascuence: *Agotate beçala beti bar bar bar drainsatela*, que bueltas en castellano quieren decir que «como agotes siempre hablan bar bar bar».

j) Aroztegi, 1656; NAN 287772.

<24r> A la berdad lo que la dijo fue «Puta borracha, puta borracha, *çoaçe, çoaçe apaeça zure*[237] *adisquidearengana*», que en lengoa castellana quiere decir «bete, bete a tu amigo el abad».

### *2.2.8.7.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, bistakoa da hasperenik ez dagoela: *ura*, *ire*, *i* (1565), *ori* (1576), *au*, *arçen* (1584), *errian* (1597). Eta bokal bikoitzak galdu direla: *çarrac*, *çarr*, *çarrenac* (1597). Hala ere, aipatzekoa dukegu *gauçaetan* (1597) eta *apaeça* (1656) hitzetan oraindik bokal soiltzerik ez dela gertatu. Aitzitik, eta fonologiaren arloan jarraituz, ikus daiteke kontsonante elkarketek eragindako aldaketak gertatu direla:

---

235 paga ataçu] Mk hala badakar ere, ez dakigu irakurketa zuzena den eta nola interpretatu behar den.

236 çarr] esk. *carr*.

237 zure] esk. *zure* : M *çure*.

*-z + b- > -sp-*, *espaytugu* eta *-t + g- > -k-*, *baycara*. Ikus daitekeenez, lehen adibidean herskari aurretik igurzkari bizkarkaria apikaritu egin da.

Morfologiari dagokionez, artikulu hurbila agertzen da: *sorguinoc* (1578), *çiquinoc* (1615). Bestalde, *ene* (1576) posesiboa dugu Anotzibarren, ohikoa orduko testuetan. Destinatiboan, Ihabenen lekukotzen den *cageençat* hitzean, irakurketa zuzena bada, *-en(t)zat* dugu, itxuraz destinatiboan. Hala ere, Nafarroan ohikoagoa den *-tako* dugu Anotzibarren: *enetaco* (1576). Bestalde, *baycica* (1597) atzizki pleonastikoa dugu. Aditzei dagokienez, aditz izenetan *-ten* dago: *ybilten* (1578). Horrezaz landa, **edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da: *dun* (1565, 1576), *dugu* (1578), *dut* (1584). Halaber, *izan* aditzarekin *-a-* erabiltzen da orainaldiko errotzat: *erreco çara* (1576), *çara* (1578), *baycara* (1597). Trinkoez den bezainbatean, *eraman* aditzaren *narama* (1576) agertzen da; gainera, ustez *erauntsi* aditzaren *drainsatela* (1615) dugu *au > ai* eginda. *Joan* aditzaren *cioac* (1576) hitanoko forma eta *goaz* (1576) agertzen dira indikatiboan, eta *çoaçe* (Aroztegi, 1656) dugu, aginterako bigarren pertsonan. Jusibo trinkoa ere badago: *dela* (1597). Aditzez dihardugula, merezi du Anotzibarko lekukotasunean agertzen den *orye*-z bi hitz egitea. Goi-nafarreraz idatzitako testuetan ez da halako formarik lekukotzen, baina itzulpena «tomad» dela ikusita, Santaziliak herskari gabeko *ori(zu)* eta *orizu(t)e* bezalako aginterazko formekin lotzen ditu.

Lexiko aldetik, *OEH*ren arabera testu nafarretan ohikoa den *maingui* (1576) aldaera aipa daiteke, gaztelaniazko *coxo*-ren ordaina. Bestalde, Igoako 1565ko esaldian agertzen den *uazama* 'madrastra' aipagarri da.

Lekukotasun horien artean, zailtasunak eragin ditu Iraizozko lekukotasunean agertzen den *carraynchu* ustezko hitzak (cf. *ConTAV* § 5.2.6). Irigaraik (1972) *carraynchu* eta Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.6) *çarraynchu* dakarte. Irakurketan bezala, interpretazioan ere Sarasolak dioenarekin bat gatoz, eta *çarrac çarr aynchu* 'los viejos como viejos' eta *çarrenac çarr aynchu* 'los más viejos como los viejos' esan nahi dutela iruditzen zaigu. Beraz, 'antzo' adiera duen *aintxu* aldaera lekukotzen da; Lizarraga Elkanokoak *aintzu* du. Amaitzeko, Olagueko agirian dugun *agotate* zer den ez dakigu. Esanahi aldetik, 'agotek' ergatiboa dela argi dago, baina amaierako *-ate* zer den ezin garbi esan. Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.4) ere ez dakar proposamenik. Horretaz gain, Idoatek (1978: 232) *laeca* dakarrena, ongi zuzentzen du Sarasolak, jatorrizkoan *beçala* irakur baitaiteke.

#### *2.2.8.8. Esteribar*

xvi. eta xvii. mendeetako ondoko esaldiok Esteribarkoak dira, eta Maiorak (2011: 61, 63, 78, 116 eta 127) eman zituen lehendabizikoz ezagutzera. Guztiak daude Nafarroako Artxibo Nagusiko agiritegiko prozesuetan.

Lekukotasun hauen guztien jatorrizkoak ikusteko aukera izan dugu eta horietan oinarritu gara irakurketa berriak proposatzeko.

##### *2.2.8.8.1. Testuak*

a) Eugi, 1565; NAN 27586.

> <156r> Yten que abiéndose encontrado el dicho Ansorena y el dicho Leiça, como dicho es, el dicho Leiça le dixo con alteración y enojo cuanta

mostraba tener y a manera de desafío o de amenaza al dicho Ansorena: *Eduqui nahi dituc heure hiçac?*, que quiere dezir «¿Quieres cumplir con lo que me tienes ofrecido?» o «¿Quieres cumplir tu palabra?»

b) Eugi, 1566; NAN 27598.

<4v> […] y luego yendo ansí, la dicha acusada dixo que ella vio al dicho Sancho Marticorena, quexante, cabalgar a la dicha vaca, que en bascuence dixo: *joçen çuela*.

<8r> […] y dixo en bascuence: *Çaute apurcho bat bigueletara ceren*[238] *onec beyau*[239] *jonai dic*, que en romance castellano quiere dezir: «Teneos un poco atrás, que este cabalgar quiere la baca».

c) Larrasoaña, 1579; NAN 87969.

<54r> […] que le diese sus encomiendas al dicho Martín de Larrasoaina y le dixiese que al otro día a la noche no dexase de ir. Y le dixo en bascuence estas palabras: *Çarreço*[240] *Martini biar arrasean datorrela*.

d) Larrasoaña, 1606; NAN, 100414.

<230v> […] la dicha Doña Luissa le dixo a boz alta a la dicha María Pérez de Herro en bascuence estas palabras formales: *Çerengatic orreyn pretensione banoac arçen ditu? Çierto eguia da,*[241] *andi asco da*. Y la dicha María Pérez de Herro le respondió assí bien en bascuence: *Ni andi asco banays, ene anditasunonec estrauco*[242] *orri gayçic eguiten. Eta ori da dolor sinple bat, entrayna charretaco*[243] *bat eta opinio orretan çaude*,[244] que traduzidas a la lengoa castellana quieren dezir las sobredichas palabras que la dicha Doña Luissa en bascuence se las dixo a la dicha María <231r> Pérez de Erro «¿Por qué toma tan banas pretensiones? Cierto verdad es, arto grande es». Y las que la dicha María Pérez de Herro las dixo assí bien en bascuence en respuesta de las sobre dichas palabras quieren dezir en romance: «Si yo soy arto grande, mi grandeza no le haze mal alguno. Y ella es ruin simple y de ruines entrañas y en esa opinión está».

<235v> […] le dixo en bacuence en respuesta de otras que la dicha Doña Luisa se las dixo: *Ori çer da, condiçio charres beteric dagona, opinione charretacoa?* Y que no save declarar el sentido de las dichas palabras.

---

238 bigueletara ceren] <et> lerro artean. M *biguel eretatecen*. Ez da irakurketa erraza, nolanahi ere.
239 beyau] esk. *beyau* : M *beyan*.
240 çarreço] esk. *çareço*.
241 eguia da] esk. *eguiada* : M *eguinda*.
242 estrauco] esk. *estrauquo*.
243 charretaco] azken <c> ondoren gehitu da <a> eta <o>ren artean, horren irakurketa zailtzen du.
244 çaude] esk. *çauda*.

e) Zuriain, 1613; NAN 297189.

> <58r> […] dixo el acusado contra el dicho licenciado Usechi, quexante, con la cólera y soberbia que las demás semejantes que estas: *Françesec*[245] *vayño*[246] *obequi iguitu aut nic*.

*2.2.8.8.2. Iruzkina*

Fonologiari dagokionez, hasperenaren aztarnak izan daitezke ondoko adibideok: *nahi*, *heure*, *hiçac* (1565), *bihar* (1579), baina, hala balira, galtze bidean dagoela dirudi; cf. *jonai*, *bey*, *onec*, *au* (1566), *andi*, *ori* (1606). Badirudi, hitz bukaeran txistukari igurzkariak neutralizatu eta apikari egiten direla, ez *charres* (1606) instrumentalean bakarrik, baita agiri berean dagoen *banays* adizkian ere. Dena den, kontu grafikoa izan daiteke, azkena batez ere. Bestalde, asimilaziozko sabaikaritzea dugu: *vayño* (1613). Amaitzeko, latinetikako maileguetan *-ione* eta *-io* ditugu: *pretensione*, *opinione* (1606), baina *condiçio* eta *opinio* (1606) ere badira.

Izen morfologian, *ene* (1606) izenordain posesibo zahar arrunta dugu lehen pertsonan; eta bigarren pertsona indartuan *heure* (1565). Nola interpretatzen dugun, artikulu hurbila izan genezake *beyau* (1566) eta *ene anditasunonec* (1606) adibideetan. Instrumentalean aldaera apikaria agertzen da: *charres* (1606). Bestalde, *orreyn* (1606) mailakatzailea agertzen da; *OEH*ren arabera (s.v. *horren*) *orrein* aldaera Nafarroan Bortzirietan eta Lapurdin ageri da. Adberbioak sortzeko *-ki* agertzen da: *obequi* (1613). Aditzei dagokienez, trinkoen artean *egon* aditzaren forma trinkoan *çaute* (1566) eta *çaude* (1606) ditugu. Horrekin batera, badirudi *çarreço* 'zuk hari erraiozu' *erran* aditzaren forma trinkoa dela, NOR-NORI sailekoa (cf. Lazarragaren *çarrezt* 'erraidazu'). Jusibo trinkoa da *datorrela* (1579).

Horretaz gain, hitanozko adizkiak erabiltzen dira: *dituc* (1565), *dic* (1566), *aut* (1613). Indikatiboko NOR-NORI-NORK sailean **eradun* agertzen da, sinkoparekin: *estrauco* (1606).

Sintaxiaz den bezainbatez, Linschmann-Aresti legea betetzen dela dirudi: *eduqui nahi dituc heure hiçac* (1565). Bestalde, badirudi Larrasoañako 1606ko lekukotasunean bi emakumeek elkarri berorika hitz egiten diote: *Çerengatic orreyn pretensione banoac arçen ditu?*, *Eta ori da dolor sinple bat* (1606).

Lexikoan *biguel* aldaera agertzen da, *OEH*ren arabera Bortzirietako aldaera dena; baina lekukotasun honek hitzaren hedadura geografikoa zabaltzen du. Bestalde, Eugiko 1566ko esaldietan jartzen den *jo* aditzak adiera sexuala du. Euskaraz beste zenbait lekutan ere agertzen da: Etxepareren *io badeça dardoaz ere* eta Zufiko ezkontza fedeko *jo baneça* adibidetan bezala (cf. 2.2.7.8). Mikoletak «fornicar, *xo*» (Mitxelena *TAV* § 3.2.6) dakar. Horretaz landa, 1565eko Eugiko esaldian —*Eduqui nahi dituc heure hiçac?*— *hitza eduki* agertzen da, 'hitza atxiki' esanahiarekin; Axularrek eta Etxeberri Ziburukoak ere antzeko esanahiarekin erabiltzen dute (*OEH*, s.v. *eduki*). Ikus daitekeenez, *dolor* 'doilor' (1606) aldaera erabiltzen da, gaztelaniazko *ruin* or-

---

245 françesec] esk. *françes ec* : M *françes ec*. Parentesi artean *ez* dakar Mk; hala ere, guk *ec* irakurri eta hala interpretatzen dugu, alegia, *françesec* ergatiboa irakurri behar dela uste dugu. Ohart gaitezen, *Frantzes* pertsona izenaren aurrean gaudela, ez frantziar gentilizioaren aurrean.

246 vayño] <y> hizkiak beltzune bat du gainean.

dain. *OEH*k dakarrenez (s.v. *doilor*) Larramendiren hiztegian agertzen da lehen aldikoz. Halere, 1606an *dolor* dugu Larrasoañan eta *dollor* dago 1566an Bakedaon (§ 2.2.8.14). Amaitzeko, zalantza sor daiteke *iguitu* (1613) interpretatzeko orduan, 'higitu' edo 'higuindu' izan baitaiteke; prozesuan itzulpenik ez dago esanahia jakiteko, eta gainerako lekukotsunek ere ez dute askorik laguntzen, ez baita hitza gehiago lekukotzen 1750 aurretik.

### *2.2.8.9. Erroibar*

Erroibarko lekukotasun bakarra dugu, Lintzoaingo 1561eko prozesuan agertzen den esaldi txiki bat besterik ez. Berau Maiorak (2011: 52) eman zuen ezagutzera aurrenekoz. Guk jatorrizkoa ikusteko aukera izan dugunez, horretan oinarritu gara.

#### *2.2.8.9.1. Testua*

a) Lintzoain, 1561; NAN 198340.

> <74v> […] que dixo el dicho Miguel de Mezquiriz al dicho abad en bascuence: *Traydorea, ayerric nagoc!* por dos vezes, deziendo «Traydor, deseo reñir».

#### *2.2.8.9.2. Iruzkina*

Esaldi laburra izanik, iruzkintzeko askorik ez du. Dena dela, nabarmentzekoa da hiketa ageri dela, eta *egon* aditzaren *nagoc* adizkian ikus daitekeenez, ez da Aresoko *neagon* edo Ezkurrako *çeagoc* aldaeren pareko *-e-*duna.

Lexiko aldetik, *ayerric nagoc* '(borroka egiteko) irrikan egon' da.

### *2.2.8.10. Eguesibar*

Hiru dira Eguesibarko lekukotasunak; lehen biak 1596koak eta hirugarrena 1606koa. Nafarroako Artxibo Nagusiko agiri banatan agertu dira esaldiok eta Maiorak (2011: 97, 98 eta 117) eman zituen ezagutzera.

Egueskoaren eta Olatz Txipikoaren jatorrizkoak ikusi ditugu, baina Badostaingoa ez dugu aurkitu. Erreferentziak zuzena dirudien arren, prozesua hagitz potoloa da eta ezin izan dugu aurkitu euskarazko esaldia.

#### *2.2.8.10.1. Testuak*

a) Egues, 1596; NAN 71386.

> <21r> […] y el dicho Vergara le respondió en vascuence: *Ecioat eman nay hor bati arri ones*, que no le quería dar con la piedra a un perro.

b) Olatz Txipia, 1596; NAN 199822.

> <4v> […] dixo semejantes palabras que estas: *Bada, ni el banenquio Alsusaten, Olazeneco mutilcoa baze lagunic ez luela, nic jaquinenique zer eguin* que si lo topaba en Alsusate solo, sin otra compañía sino el mochacho de los de casa de Olaz, qu'el sabría qué hazer.

c) Badostain, 1606; NAN 57467.

> <…> […] de comó le havían salido al camino a matarle aquella noche, y no le oyó nombrar al tiempo quiénes más de que le dixo en bascuence: *Eççayac atra saisquit bidera ilçera*.

*2.2.8.10.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, nabarmentzekoa da afrikatu bizkarkaria adierazteko saiakera: <çç> erabiltzen da *eççayac* (1606) adibidean. Bestalde, ez dakigu <h> espletiboa ala etimologikoa den *hor* (1596) adibidean.

Fonologia aldetik, apikarien aldeko txistukarien neutralizazioa dagoela dirudi: *saisquit* (1606). Nolanahi ere, neutralizazio hori ez da sistematikoa: *ecioat* (1596), *ez luela* (1596). Sinkoparen adibide bat ere bada: *atra* (1606).

Morfologia aldetik, instrumentaleko aldaera apikariduna agertzen da: *arri ones* (1596). Aditzen artean, jokatugabeei dagokienez, geroaldiko atzizkia *-en* da *-n* bukaera duten aditzekin: *jaquinen* (1596). Jokatuez den bezainbatez, hitanoko adizkien agerrera nabarmena da: *ecioat* (1596), *jaquinenique* (1596). Aipagarri dateke Olatz Txipiko 1596ko esaldian agertzen den *el banenquio*; batetik, perifrasi zaharra agertzen da; bestetik, aditzoina mantentzen dela ikusten dugu. Amaitzeko, *l-* aurrizkia agertzen da mendeko perpaus bateko iraganaldiko adizkian: *lagunic ez luela* (1596).

Hiztegi aldetik, *hor* (1596) hitz zaharra ageri da; *OEH*ren arabera, Hegoaldean errefrauetan bakarrik lekukotzen da. Olatz Txipian *baze* ageri da, 'baizen', gaztelaniazko *solo*-ren ordain.

*2.2.8.11. Artzibar*

Artzibarko lekukotasun bakarra dugu, Nagore herrikoa da eta 1599ean jaso zen testigantza. Santaziliak (2018) eman du ezagutzera. Hain zuzen ere, edizio hori baliatu dugu gurea egiteko, baina jatorrizkoa ere ikusi dugu.

*2.2.8.11.1. Testua*

a) Nagore, 1599; NAN 71707

> <63v> (...) *joan çaçue auçis*, «que le llevasen por pleyto.»
>
> <64v> (...) esta que depone, en bascuençe, por dos vezes: *Ea, deamucho ari, beguira* (...) le respondían, en bascuençe «calla, viuda, que moço y moça somos». Y esta que depone en bascuence le dixo: *Enegatic or beguira*.
>
> <65r> (...) y dixo echando maldición en bascuençe: *Lepo eçurra auchiric eldu al lisan*.[247]
>
> <98r> (...) y dixo en bascueçe las palabras siguientes: *Jesus, nic estut Amadorequi*[248] *eguitecoric içandu*[249] *egundayño*.

---

[247] eldu al lisan] irakurketa oso zaileko pasartea da; *el duallis an* dator eskuizkribuan. Begira Santaziliak horri egiten dion oharra.

[248] Amadorequi] aurretik *arequy* tatxaturik.

[249] içandu] esk. *icandu*.

<338r> (...) le dixieron las dichas mochachas en bascquençe: *Or dago, or*, que quieren deçir «ay está, ay.»

*2.2.8.11.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, badirudi neutralizazioa dagoela herskari aurretik: *estut* (98v); ez ordea bokal artean: *içandu* (98v).

Morfologia aldetik, aipagarria da soziatiboko *-reki*: *Amadorequi* (98r) eta lerro berean tatxaturik *arequi*. Halaber, instrumentalean *-s* ageri da: *auçis* (63v). Aditzei gagozkiela, *izan* aditzaren forma pleonastikoa ageri da: *içandu* (98r). Gainera, aferesidun adizkia dago aginteraz: *çaçue* (63v). Azkenik, *joan* aditzaren erabilera iragankorra dakuskigu: *joan çaçue* 'eraman ezazue'.

Lekukotasun honen zenbait pasarte ilun ikusten ditu Santaziliak. Lehena *deamucho* da, gaztelaniazko «De a mucho» egituratik hartua izan daiteke; euskaraz *deamutxoan* lekukoturik bide dago. Halere, deabruaren txikigarria ere izan daiteke. Edonola ere, lehenengoaren alde egiten du Santaziliak. Pasarte ilunena, ordea, *Lepo eçurra auchiric eldu al lisan* biraoaren bigarren zatia da, ez baitago garbi hitzen banaketa eta karaktere zenbaiten interpretazioa (Santaziliak berak irudia dakar hori erakusteko).

*2.2.8.12. Zaraitzu*

Euskararen dialektoen sailkapenetan, Bonapartez geroztik, Zaraitzuko mintzoa goi-nafarreratik bereizirik ageri da. Ekialdeko behe-nafarrerarekin lotu zuen Bonapartek (1869); aldiz, erronkarierarekin batera, «ekialdeko nafarreraren» barruan kokatu zuen Zuazok (2006). Ez da gure saio honen helburua sailkapenak zalantzan jartzea, baina, batetik, Zaraitzuren kokapen geografikoa kontuan izanik eta, bestetik, 1750 aurretik ezagutzen diren Zaraitzuko hiru lekukotasun laburrek goi-nafarrerarekin dituzten antzekotasunak kontuan harturik, hona ekartzea erabaki dugu.

Zaharrena 1590ekoa da eta Ezkarozeko —dena den, Jaurrietakoa izan daiteke— auzi batean lekukoak esandakoa jasotzen da. Bigarrena Otsagabikoa da, eta hori ere prozesu batean jaso zen 1598an. Azkena, 1736koa da, Otsagabikoa hori ere. Hirurak Maiorak (2011: 88-89; 102-104 eta 160-161) eman zituen lehendabizikoz ezagutzera, baina ondoren Santaziliak (2015) berriro argitaratu eta aztertu zuen Otsagabiko zaharrena.

Hemengo edizioa paratzeko, lehen bietarako jatorrizkoetan oinarritu gara; aldiz, azkena ez dugu agirian ikusteko parada izan.

*2.2.8.12.1. Testua*

a) Ezkaroze, 1590; NAN 309081.

<7v> […] porque, entre otras palabras que le oyó dezir al dicho Çorroça, acusado, con mucha sobervia, alteración y cólera para contra el dicho mayoral, fue: *Usdaçue emen, il nay diat*, que quiere dezir: «Déxenme aquí, quiero morir». Y en particular a Pedro de Udarezpe, su propio compañero, porque le

estorbava de quererse ir para contra el dicho mayoral, le dixo: *Usdac edo puñal ucaldi bat emanen diat*, que quiere dezir: «Déxame, donde no os daré una puñalada».

<8r> eta <14r> […] y bio que uno llamado Juanes Çorroça, acusado, con un lançón que llebava, le quiso sacudir y se arremetió por dos o tres vezes para contra el dicho mayoral, deziéndole: *Bellaco, ladron probatua, jeneracio gaistoa*, que quiere dezir: «Sois un bellaco, ladrón probado», y otras palabras mal dichas que no se acuerda. No save lo que le respondió el dicho mayoral, más le dixo a los que estaban presentes sean testigos de lo que a dicho. Y más dixo el dicho Çorroça, acusado, a los que le estorbaban cuando quiso dar con la lança al dicho mayoral: *Usdaçue emen, il nay diat*, que quiere dezir: «déxenme, que aquí quiero morir». Y en particular le dixo a Pedro de Udarezpe, su compañero, así bien acusado: «Déxame, que os daré una puñalada» en bascuence: *Usdac edo emanen diat puñal ucaldi bat*.

b) Otsagabia, 1598; NAN 12831.

<32r> […] Iratico oyanean nic arr balin baneça, eta bioc bayçi espaguina, licençiatu Palacios eta ni,[250] nic eracuchico nuen nondic gin sen isusquia. Eta nic ilarrozaldi bat emanen nioque bellaco çarrari. […]

[…] Iratico eremuan arr badeçat, nic eracuchico diot ichusquiaren bearria. […]

<35r> […] ençuna baycic espadaquic, ori estuc deuç ere, eta goaye, Jayncoa lagun daquiala. […]

<39r> […] compon bite, Maria,[251] nombayt ilquico duçu, baldinba […]. compon bite, Maria.[252] […]

<58r> […] goraynçi Bidondoren arçayari.[253] […]

c) Otsagabia, 1736; NAN 154683.

<...> y añaden algunos que también dijo en idioma vascongado: *vear vecala dago dagon lecuan*...

### *2.2.8.12.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, hasperenak galdua dirudi eta horrek eragindako bokal bikoitzak soildu dira: *çarrari* (1598). Inoizko **-ani* zaharrak *-ai* eman du Zaraitzun: *arzayari* (1598). Bestalde, txistukari bizkarkariak neutralizatu egiten dira, herskari aurretik, apikariaren mesedetan: *gaistoa* (1590), *espaguina*, *estuc*, *espadaquic* (1598). Hitz hasieran ere badago adibide batean: *sen* (1598). Nafarroa gehienean ohi denez, *wa-* > *gwa-* gertatzen da, irakurketa ziurra bada bederen: *goaye* 'hoa' (1598). Bestalde, *-on* egiten da maileguetan: *ladron* (1590). Amaitzeko, latinezko *-tione* > *-cio* egin da: *jeneracio* (1590).

---

[250] licençiatu Palacios eta ni] lerroartean.
[251] compon bite, Maria] lerro artean; Maria esk. $m^a$, laburduraz.
[252] Maria] esk. $m^a$, laburduraz.
[253] arçari] esk. *arcayari*.

Izen morfologiari dagokionez, artikulu hurbila daukagu *bioc* (1598) adibidean. Aditzen artean, geroaldian *-en* erabiltzen da *-n* bukaera duten aditzekin: *emanen* (1590, 1598). Bestalde, **edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da: *estuc*, *duçu* (1598). Irakurketa zuzena bada, *joan* aditzaren aldaera nafarra ageri da: *goaye* (1598). Trinkoez dihardugula, aipagarri dira *usdaçue* eta *usdac* (1590) aginterazko adizkiak. Horrezaz gain, NOR-NORI-NORK sailean beti *-i(n)-* erroa erabiltzen da: *emanen diat* (1590), *emanen nioque*, *eracuchico diot* (1598). Alokutiboan ere, *-i(n)-* erabiltzen da: *nay diat* (1590). Indikatibotik landako perifrasietan aditzoina erabiltzen da: *arr balin baneça*, *arr badeçat*, *compon bite* (1598). Azkenik, *lagun izan* aditz lokuzioa agertzen da, NOR-NORI aditz laguntzailearekin: *lagun daquiala* (1598).

Sintaxiari dagokionez, baldintzan perifrasi zaharra agertzen da: *arr balin baneça*, *arr badeçat* (1598). Bestalde, *bayçi* eta *baycic* (1598) bi aldaerak ageri dira.

Lexikoari dagokionez, aipagarri da ekialdean mantendu den *gin* 'etorri' (1598). Bestalde *isusquia* eta *ichusquiaren* (1598) adibideetan ikus daitekeenez, *itsuski* izena erabiltzen da 'erratza' esanahiarekin. Gainera, *ilquico* 'elkiko' (1598) aldaera erabiltzen da. Ekialdeko osoko testuetan ohikoa den *bearria* (1598) ere agertzen da, baina 'kirten' esanahiarekin. 'Ziurrenik' esan nahi duen *baldinba* (1598) dago, Iruñean ere agertzen da 1612an (§ 2.2.8.20). Itxuraz bederen, *oyanean* (1598) eta *eremuan* (1598) sinonimotzat hartzen dira. Bestalde, *ucaldi* agertzen da, *OEH*ren arabera (s.v. *ukaldi*) Leizarragak erabiltzen du lehenengoz, eta gero oso gutxi lekukotzen da XIX. mendearen erdira arte. Halere, Lizarraga Elkanokoak *arrucáldi* 'harri ukaldi' dakar. Horrezaz landara, *ilarrozaldi* (1598) agertzen da, adiera aldetik 'astinaldi' dela dirudi, eta Santaziliak (2015: 127) *inarrotsi* aditzarekin lotzen du. Amaitzeko, *deuç* ezohiko aldaera agertzen da. Ez dugu beste inon bizkarkaridun aldaerarik aurkitu; beraz, kontu grafikoa izan daiteke.

### *2.2.8.13. Ameskoa*

Ameskoako Bakedao herriko lekukotasun hau Maiorak (2011: 62) eman zuen ezagutzera lehen aldikoz, dakigula behinik behin. Nafarroako Artxibo Nagusian dago, Bakedaon gertatutako sesio bat dela eta abiatutako prozesu batean; 10619 zenbakia du agiriak. Jatorrizkoa ikusi dugunez, bertan oinarritu gara edizioa prestatzeko.

#### *2.2.8.13.1. Testua*

a) Bakedao, 1566; NAN 10619.

> <45r> Yten que a esto respondió el dicho Martín Gonçalez: «Yo puedo ablar lo que e hablado, y ablaré aunque topase *dollorr, traidore seme, puta semea*», qu'es decir «sucio ruín, e ijo de traidor, e ijo de puta», que es la más grabe ofensa e injuria que de palabra se puede hazer, y más dixo: *Lehen ere beguietan haducat eta, guero vada lehen vada, ene escuetaric joanen haiz*, qu'es decir «Yo te tengo antes de agora sobre ojos y, sea antes y sea después, tú as de morir en mis manos o por mis manos».

### *2.2.8.13.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, badirudi XVI. mendearen erdialdean hasperena bazela Ameskoan. Hala erakuts dezakete *lehen*, *haducat* eta *haiz* adibideek; Erdi Aroan Nafarroako mendebaldeko toponimoetan hasperena ediren daiteke (Reguero 2012: 116).

Izen morfologiaz den bezainbatez, *ene* izenordain zaharra agertzen da. Ablatibo pluralean *-etarik* aldaera arkaikoa dugu *escuetaric* adibidean. Aditz morfologiari dagokionez, azpimarratzekoa dirudi *-n*-z bukatutako aditzetan geroaldiak *-en* morfema hartzen duela: *joanen*.

Sintaxi aldetik, *guero vada lehen vada* egitura erabiltzen da 'orain ez bada, gero' antzeko esanahiarekin; gaztelaniazko 'sea antes y sea después' itzulpena du.

### *2.2.8.14. Goñerri*

Goñibarko Urdotz herrian afera izan zen 1687an bertako jauntxoek zituzten pribilegioak eta tratu bereziak zirela-eta. Gatazka hori Iruñeko Elizbarrutiko Artxibategian dagoen prozesu batean dago jasoa: C1179, n.16 da agiriaren erreferentzia. Bertan lekukoen testigantzak daude, horietarik asko euskaraz. Satrustegik (1981, 1987) eman zituen ezagutzera lehenengoz esaldi horiek. Gure edizioa egiteko, jatorrizko bertsioa erabili dugu. Hauek dira ezagutzen ditugun Goñerriko esaldi bakarrak.

### *2.2.8.14.1. Testua*

a) Urdotz, 1687; IEA, C1179, 16 zb.

> <16r> Volviendo solamente el rostro al pueblo, dixo en lenguaje vascongado estas palabras: *Escu libertatua*, que en el castellano significan o vale por estas: «Mano libertada».
>
> <18v> El acusado volvió el rostro al pueblo y en lengua vascongada dijo estas palabras solamente: *Eliza sandu ontan escu egosten duenac Jaincoac valemoque castigu*, que traducidas en lenguaje castellano valen por estas: «Quien en esta Santa Iglesia echa o pone manos, Dios le puede castigar».
>
> <24v> A lo cual volvió el rostro tan solamente el acusado al pueblo y en voz alta, colérico, dijo en lengua vascongada estas palabras: *Jangoico onipotenteac daqui castigazen escu libertatuac lecu ontan*, que traducidas al lenguaje castellano dicen estas: «Dios omnipotente save castigar las manos osadas o libertadas en este lugar».
>
> <28v> El acusado, volviendo el rostro solo al pueblo, dijo estas palabras, que no otras, en lenguaje vascongado: *Zaute ijilic! Esta au lecua jarduquiceco; castiguac bear badire, campoan bear dire*, que traducidas al castellano dicen estas: «Estad callando, no es este lugar de ablar: si son menester castigos en el campo, se an de hacer o menester».
>
> <30v> Volviendo el rostro al pueblo, porque entre otras mugeres se avía levantado un rumor o eco de palabras, dijo estas en lengua bascongada: *Esta au puesto orlaco gauzac eguiteco, eta escu libertatuac badaqui Jangoicoac castigacen*, que traducidas en lenguaje castellano valen estas: «No [es] este puesto para hacer semejantes cosas, y las manos libertadas save Dios castigar».

<35r> Volviendo el rostro solamente al pueblo, dijo en voz y semblante natural y en lenguaje vascongado estas palabras: *Esta au lecu jarduquicecoa, eta gure*[254] *Jangoicoac badauzqui castiguac escu libertatuen vere eche sanduen castigaçeco*, que traducidas al castellano valen por estas: «No es este lugar de ablar, y Nuestro Señor ya tiene castigos para castigar las manos libertadas en esta su santa cassa».

<37r> Volviendo el rostro tan solamente al pueblo, dijo en su voz natural en lengua vascongada estas palabras: *Lecu ontan escu libertatuac vadaquizqui Jaun Divinoac castigacen*, que traducidas al castellano dicen estas: «Las manos libertadas en este lugar save el Divino Señor castigar».

<39r> Volviendo el rostro solamente al pueblo, dijo a la quejante en voz alta y en lenguaje vascongado estas palabras: *Desbergonzatua, acordatu vear dun egungo egunas*, que quieren y valen por estas: «Desbergonzada, te as de acordar de este día».

<42r> Volviendo el rostro solamente al pueblo, dijo en voz alta y con alguna cólera, al parecer del testigo, en lenguaje vascongado estas palabras: *Vego ijilic! Esta au puesto jarduquiçeco; desbergonçatu den vezala jarduquizen du*, que traducidas en lenguaje castellano dicen estas: «Esté callando! No es este puesto de ablar; como desbergonzada que es está ablando».

<55v> Volvió el rostro solamente al pueblo y en lenguaje vascongado dijo estas palabras: *Çaute*[255] *ijilican! Eci escu libertatuendaco Jaingoicoac badauzqui castigoac*, que en lenguaje castellano dicen estas: «¡Estad callando! Que para las manos libertadas Dios tiene castigos».

<56v> Volviendo el rostro solamente al pueblo, dijo en su ser y estado natural en lengua vascongada estas palabras: *Escu libertatu oyeq vadaqui Jangoico onipotenteac castigacen*, que en el castellano dicen: «Esas manos libertadas save Dios omnipotente castigar».

### *2.2.8.14.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, badirudi txistukari igurzkari sabaiaurrekoa islatzeko <j> erabiltzen duela: *ijilic* (28v, 42r), *ijilican* (55v). Nolanahi ere, *Jaincoac* (18v), *Jangoico* (24v), *Jangoicoac* (30v), *jarduquicecoa* (35r) ditugu, eta ezin zehatz jakin hitz horietan <j> grafemak zein hots islatzen duen.

Fonologia aldetik, txistukarien neutralizazioa egon daiteke herskari aurretik: *egosten* (18v), *esta* (< *ez da*; 28v, 35r, 42r), baina ez da beti gertatzen: *badauzqui* (35r, 55v), *daquizqui* (37r). Beraz, kontu grafikoa izan daiteke. Bestalde, sinkoparen adibiderik badago: *ontan* (18v, 24v), *orlaco* (30v).

Morfologia aldetik, artikuluaren erabilera murriztua ageri da: *escu egosten duenac*, *valemoque castigu* (18v), *desbergonçatu den vezala* (55v). Erakusleei dagokienez, *oyeq* (56v) da bigarren pertsona pluralekoa. Instrumentalaren aldaera apikaria agertzen da, behin bakarrik bada ere: *egunas* (39r). Bestalde, destinatiboan *-endaco* da erabiltzen dena: *libertatuendaco* (55v). Moduzko adberbioetan, erdialdeko *-ikan* agertzen da, behin bada

[254] gure] ondoren tatxaturik *eta.*

[255] çaute] esk. *caute.*

ere: *ijilican* (55v). Interpretatzen zaila egin zaigu *gure Jangoicoac badauzqui castiguac escu libertatuen vere eche sanduen castigaçeco* (35r) esaldia. Batetik, *libertatuen* destinatiboa izan daiteke, 'esku libertatuentzat' alegia; baina, bestetik, *castigaçeco* aditz-izenaren objetua izan daiteke, genitiboan. Aditz morfologiaz den bezainbatez, trinkoetan *eman* aditzaren *valemoque* (18v) adizki trinkoa agertzen da; *-o-* hori datibo marka da eta, beraz, NOR-NORI-NORK sailekoa da, hau da, 'emango lioke' da adiera. *Izan* aditzaren orainaldiko hirugarren pertsonaren pluraleko forma *dire* (28v) da, eta **edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da hitanoko: *dun* (39v). Gainera, *egon* aditzaren aginterazko trinkoan Nafarroan ohikoa den *zaute* (28v), *çaute* (55v) erabiltzen da; bestalde, *vego* (42r) dago jusiboko hirugarren pertsonan. *Eduki* aditzaren pluralgilea *-zki* da Nafarroan ohi denez: *badauzqui* (35r, 55v). Amaitzeko, aipagarri da 37r-ko *vadaquizqui* perpaus osagarriaren barruko objektuarekin —*escu libertatuac*— komunztatzen duelako.

Sintaxi aldetik, genitibo lokatiboa izenaren eskuinean agertzen den adibiderik ez da falta: *puesto orlaco gauzac eguiteco* (30v), *lecu jarduquicecoa* (35r), *puesto jarduquiçeco* (42r).

Lexiko aldetik, behin eta berriz ageri da *sandu* aldaera nafarra. Bestalde, orduko testu zaharrretan ohi denez, *egun* (39r) 'gaur' esanahiarekin agertzen da. Amaitzeko, *libertatu* dugu, 'ausartegia, lotsagabea' esanahiarekin, *OEH*k (s.v. *libertatu*) ez du adiera hori jasotzen, baina *DAut*en badago (s.v. *libertado*).

### *2.2.8.15. Deierri*

Deierriko bi lekukotasun labur ditugu. Lehena 1567koa da, eta Aizkoan izandako gertakari bateko auzi-agiri batean agertzen da. Lekukotasun hori Maiorak (2011: 64) eman zuen lehenengoz ezagutzera. Bigarrena 1602 inguruan jaso zen idatziz urte inguru hartan Aritzaletan izandako auzi bat jasotzen duen agiri batean; azken hori Erdoziak (2005) eman zuen ezagutzera.

Bi agiriak Nafarroako Artxibo Nagusian daude, eta bien jatorrizkoak ikusi ditugu. Aritzaletakoaren kasuan, guretik ezberdintzen den hitz baten irakurketa bat proposatzen du Erdoziak; aparatu kritikoan E laburduraz eman dugu berea.

#### *2.2.8.15.1. Testuak*

a) Aizkoa, 1567; NAN 211546.

> <33r> […] le dixo el dicho acusado a la dicha quexante, poniendo el dedo en la frente, en bascuence: *Bada, aseguin arr eçan, eçen ni bengatuco nayçan*, que quiere dezir en romance: «Pues toma placer, que yo te me bengaré».

b) Aritzaleta, c.1602; NAN 088989.

> <276r> […] y que, aunque no save ni a visto aya avido palacio en el dicho sitio jamás, pero se acuerda, puede aber doce años de tiempo, en el dicho lugar passeando por junto de la dicha heredad en conpañía de Joan de Munarriz, vecino que fue del dicho lugar, ya difunto, tratando de la dicha heredad y de la cerradura y paredes de piedra sillar llebaba y lleba en todo a la redonda, le hoyó dezir al dicho Joan de Munarriz semejantes questas palabras en bascuence: *Bada, emen noys ere bayt jaurri çarra çela erraten oy çuten*. Y

> este testigo le respondió a esto: *Ori olatan,*[256] *emen hechagorpuz andia oy cen, olçeq heracusten duten beçanbates*. Que las dichas palabras bueltas en castellano quieren dezir: «Aquí algún tiempo palacio viejo solían dezir que ubo». Y la respuesta deste testigo: «Aquí gran cuerpo de cassa solía aber, según lo muestran las paredes».

### *2.2.8.15.2. Iruzkina*

Grafiari dagokionez, <h> espletiboa ageri da *heracusten* eta *hechagorpuz* (1602) adibideetan. Bestalde, hitz amaieran <q> erabiltzen da, behin bederen, herskari belarrerako: *olçeq* (1602).

Fonologia aldetik *-e* > *-a* hitz elkarketako bilakabidea gertatu da *hechagorpuz* (1602) hitzean. Horretaz gain, hitz bukaeran txistukari igurzkarien neutralizazioa dagoela ematen du: *noys*, *beçanbates* (1602).

Izen morfologiaz den bezainbatez, instrumentalean *-s* aldaera apikaria agertzen da: *beçanbates* (1602). Bestalde, 'noizbait' esanahia duen denbora aditzondo moduan *noys ere bayt* (1602) erabiltzen da eta moduzko aditzondoetan inesiboa dago: *olatan* (1602).

Aditz morfologia aldetik, indikatibotik landako NOR-NORK sailean **ezan* erabiltzen da eta, ikus dezakegunez, aditzoinarekin mantentzen da *-tu* partizipioa duten aditzetan: *arr eçan* (1567). Bestalde, **edun*-en aditzekin hirugarren pertsonako pluralgilea *-te* da: *çuten*, *duten* (1602). *Izan* aditzaren iraganeko hirugarren pertsonan *-e-* dago: *cen* (1602), baina *nayçan* (1567) agertzen da lehen pertsonan.

Sintaxi aldetik, ondoriozko perpausean *eçen … -(a)n* erabiltzen da: *vada, aseguin arr eçan eçen bengatuco nayçan* (1567). Bestalde, Aritzaletako lekukotasunean ikus daitekeenez, bi aldiz ageri da *oy* partikula ohitura adierazteko: *erraten oy çuten* eta *andia oy çen* (1602). Lehen adibidean *-t(z)en* duen perifrasiarekin agertzen da, baina Nafarroan ez da erraza, testu zaharretan behinik behin, halakorik aurkitzea. Horretaz gain aurkitu ditugun adibide bakarrak Olatzagutiko ezkontza fedean daude: *arçen oy duen*, *arcen oi duen* eta *ematen oi duen*. Aldiz, Isastiren 21. errefrauan *galdu oi ditu* dago. Aritzaletako bigarren adibidean —*andia oy çen*— trinko baten aurretik aurretik dago *ohi* partikula; *OEH*n (s.v. *ohi*) ez dago gisa horretako adibide nafarrik.

Lexiko aldetik *hechagorpuz* agertzen da, *OEH*ren arabera (s.v. *etxe-gorputz*) ezagutzen den lekukotasun bakarretakoa. Bestalde 'jauregi' esanahia duen *jaurri* (1602) erabiltzen da. Dena den, *OEH*ren arabera (s.v. *jauregi*), *jauri* irakurri behar da; agian, *jauregi* > **jaurei* > *jauri* egin da; gaur egun Arian (Aezkoan) *Xaurikoa, casa Jausi* daukagu. Horiekin batera, *olç* (1602) dugu 'horma' adierazteko. Azkenik, ekialde zabaleko *erraten* (1602) aldaera erabiltzen da.

### *2.2.8.16. Lizarrerria*

Lizarra inguruan, egun Metautengo kontzejua den Ollogoiengo eta Barbarin herriko esaldiak dakartzagu oraingoan. Biak dira XVI. mendekoak eta Nafarroako Ar-

---

[256] ori olatan] esk. *oriolatan* : E *orrelatan*. Ez da ziurra laugarren letra <o> izatea, zuzenketa baitu eta ez baita erraza ulertzen.

txibo Nagusiko bi agiritan daude. Ollogoiengoa Maiorak (2011: 71) jaso zuen lehendabizikoz. Aldiz, Barbaringoa Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.4) dakar, Idoatek (1978) argitara emandako dokumentuetatik aterea. Idoatek ez zuen eman agiriaren erreferentziarik, baina Artxibo Nagusiak sarean jarri dituen prozesuen fitxak begiratuta, jakin ahal izan dugu prozesuaren zenbakia 028316 dela. Jatorrizkoa ikusi ahal izan dugu, eta Idoatek eman ez zuen euskarazko beste esaldi bat aurkitu dugu 28v orrialdean. Ollogoiengoa ere ikusi dugu. Beraz, bien jatorrizkoak erabili ditugu gure edizioak prestatzeko.

*2.2.8.16.1. Testuak*

a) Ollogoien, 1570; NAN 87417.

> <9v> […] e oyó que le dixo *Puta çarra*. Y ella le respondió en bascuence diciendo: *Ni puta çarra eta çu guiçon prestu*.

b) Barbarin, 1576; NAN 028316.

> <28v> […] *hene alaba,*[257] *herraz galdua*, quiere decir: «Ay hija mía, fácilmente perdida».
>
> <32r> […] le lloraba en vascuence semejantemente: *Ay hene alava, herraz galdua*, que quiere decir: «Ay hija mía, fácilmente perdida».

*2.2.8.16.2. Iruzkina*

Grafia aldetik azpimarratzekoa da Barbaringoak dituen bi <h> espletiboak: *hene* eta *herraz* (1576).

Fonologia aldetik ikus daiteke hasperena eta bokal bikoitzak galduak direla XVI. menderako: *çarra* (1570) agertzen da bi aldiz.

Izen morfologiaz den bezainbatez, artikulua ez da erabiltzen Ollogoiengo *çu guiçon prestu* adibidean.

*2.2.8.17. Gesalatz*

Gesalazko lekukotasun bakarra dugu eta, hain zuzen ere, Muzkikoa da. Nafarroako Artxibo Nagusiko 1597ko auzi-agiri batean agertzen da eta Maiorak (2011: 101) eman zuen lehenengoz ezagutzera. Guk jatorrizkoa ikusi ahal izan dugunez, horretan oinarritu gara.

*2.2.8.17.1. Testua*

a) Muzki, 1597; NAN 199829.

> <9v> […] y el dicho Eliçalde le respondió que en necesidad estaría diziendo en bascuence las palabras siguientes: *Bearrean egonen ais, bada?* Y más desto le dixo el dicho Eliçalde al dicho Liçasoain que ya savía que havían llevado por deuda de su hera del dicho Liçasoain sus yegoas al lugar de Irurre.

---

[257] alaba] aurretik *seme* tatxaturik.

Y preguntada si le dixo por deuda de pecha o de qué manera dixo, que no se declaró más el dicho Eliçalde, más de cuanto dixo que las yegoas del dicho Liçasoain y de su hera, ya savía el dicho Eliçalde que las havían llebado por deuda en lengua bascongada, diciendo: *çorragati?*[258]

### *2.2.8.17.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, hitz bukaeran txistukarien neutralizazioa bide dago: *ays*.

Morfologiaz den bezainbatez, motibatiboan *-gati* ageri da: *çorragati*. Aditzei dagokienez, *egonen* adibidean ikusten denez, geroaldiko atzizkia *-en* da *-n* bukaera duten aditzekin.

### *2.2.8.18. Ollaran*

Ollarango bi testu dakartzagu oraingoan. Lehena Artetakoa da eta Nafarroako Artxibo Nagusiko 1562ko agiri batean lekukotzen da. Maiorak (2011: 53) eman zuen lehendabizikoz ezagutzera. Bigarrena Ollokoa da eta bertako elizako 1743ko bataio agirian dago. Lekukotasun hori Gorka Lekarozek (2013b) eman zuen ezagutzera; hain zuzen ere, bere blogean emandako argazkia baliatu dugu gure irakurketa egiteko. Artetako esaldiaren jatorrizkoa ikusteko aukera izan dugu, eta horixe baliatu dugu.

### *2.2.8.18.1. Testua*

a) Arteta, 1562; NAN 27421.

<9v> […] y que el acusante al tiempo dixo al dicho Irissarri en bascuence: *Joan çaran bayno len joan al cinatean*, que si podía ir antes que fue.

b) Olloko bataio agiria

A veinte y ocho de Henero de mil setecientos cuarenta y tres bautizé yo, el abbad infrascrito, a Juliana Antonia y María Antonia de Ochoa sub condicione hijas de un parto y legítimas de Juan Josseph Ochoa y Juana Baptista de Roncal, dueño de la cassa llamada Juanarena de este lugar, siendo padrino Juan Antonio de Irissarri, bezino de este lugar, quien quedó advertido del parentesco y obligaciones de padre espiritual. Y el motivo de haver hecho yo el bautizo, o hechar la agua, debajo de condición fue porque allé a dichas criaturas avía bautizado su proprio padre, quien me dijo haviéndome llamado a mí, que creía se morían dichas criaturas y que, aunque avía una muger presente, no quiso admitir el bautizarlas, diziendo que era más el hombre que la muger. Y examinándole al dicho padre cómo dijo la forma y palabras, me respondió que fueron estas en idioma vulgar: *Nic bataiacen zaitut Aitaren eta Semearen eta Espiritu Sanduaren izenean.*[259] *Amen*.

---

[258] çorragatic] M *corragatiz*. Azken letra zein den interpretatzea ez zaigu erraza egin.
[259] izenean] esk. *izanean*.

### *2.2.8.18.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, hasperena galduta eta bokalak bakunduta daude: *len*, *al* (1562).

Aditz morfologiari dagokionez, ahalerazko perifrasian [*ahal* + *izan* + *-te*] egitura agertzen da: *joan al cinatean* (1562) 'joan al zinatekeen'. *Izan* aditzaren orainaldiko erroa *-a-* da: *çaran* (1562). Bestalde, erlatiboan eta iraganean *-an* agertzen da: *çaran* eta *cinatean* (1562).

Lexiko aldetik, *sanduaren* (1743) aldaera nafarra dago.

### *2.2.8.19. Oltza*

Hau da ezagutzen dugun Oltza zendeako lekukotasun bakarra; hain zuzen ere, 1606ko agiri batean jasotzen den Izkueko prozesu batean agertzen da. Maiora (2011: 123) izan zen lehena lekukotasun hori ezagutzera ematen. Agiria Nafarroako Artxibo Nagusian dago, eta jatorrizkoa baliatu dugu gure edizioa prestatzeko. Nolanahi ere, azken esaldia ez dugu aurkitu eta horretarako Maioraren edizioa hartu dugu aintzat.

Agiriko orriek beren zenbakia duten arren, gurean 2v daramanak ez du zenbakia idatzirik; halere, hori egokitzen zaionez, hala jarri dugu guk hemen.

### *2.2.8.19.1. Testua*

a) Izkue, 1609; NAN 149762.

> <2v> […] y luego salió de la dicha iglesia y al salir della, al par de la agoa vendita, dixo el dicho acussado, alçado el dedo, estas palabras: *Bay, bada, elcar chucendu bear dugu,*[260] deziendo esto por el dicho vicario.
>
> <3v> […] y al salir della oyó el testigo cómo dixo estas palabras en bascuence: *Bay, bada.*
>
> <4v> […] y a esto el dicho acusado le respondió estas palabras: *Bay,*[261] *bada, orren*[262] *ayer baçayzquit, çuc edo nic ercal chuçendu bear dugu.*
>
> <5v> […] y al salir de la iglesia dixo el dicho acusado estas palabras: *Bay, bada, ercal chuçendu bear dugu*[263] *çuc edo nic*.
>
> <6v> […] y puesto el dicho acussado dixo estas palabras: *Bay, bada, çuc edo nic orren*[264] *ayer baçayzquit ercal chucendu bear dugu.*
>
> <8v> […] oyó este testigo que dixo llevantado el dedo de la mano derecha: *Vay, bada, elcar xuxendu bear dugu.*
>
> <10r> […] dixo a altas vozes dixo: *Vay, bada, elcar chucendu bear dugu.*
>
> <…> Y al salir de la iglesia dixo el dicho acusado, sobre la frente: *Bay, bada, elcar jugendu bar dugu*.

---

260 dugu] esk. *gudu*.
261 Bay] ez da ondo irakurtzen.
262 orren] esk. *orren*.
263 dugu] esk. *gudu*.
264 orren] esk. *orren*.

### *2.2.8.19.2. Iruzkina*

Grafian aipagarria da testu berean txistukari sabaiaurrekoa irudikatzeko agertzen diren aukera desberdinak, <ch>, <x>, <j>, <g$^e$> agertzen baitira: *chucendu* (2v, 6v), *chuçendu* (4v, 5v, 10r), *xuxendu* (8v), *jugendu*.

Fonologia aldetik, sabaikaritze adierazgarria gertatzen bide da *chucendu* (2v, 10r), *chuçendu* (4v), *xuxendu* (8v), *jugendu* adibideek erakusten dutenez. Fonologiarekin amaitzeko, metatesia gertatu da, eta *ercal* (4v, 5v, 6v) eta *elcar* (2v, 8v) bi adibideak ditugu.

Morfologiaz den bezainbatez, **edun* aditzaren erroa *-u-* da: *dugu* (*passim*). Bi kasutan *dugu* beharrean *gudu* agertzen da, baina hutsa dela dirudi eta zuzendu egin dugu.

Lexiko aldetik aipagarri dateke *ayer baçayzquit* (6v) 'aiher izan, gorroto izan' aditz lokuzioa.

### *2.2.8.20. Iruñerria*

Hiriburu gisa duen garrantziagatik eta biztanle aldetik besteen aldean zuen kopuru haziagatik, Iruñea da lekukotasun gehien dituena. Bertakoak dira oraingoan dakartzagun esaldi gehienak. Hala ere, Iruñetik landa, badira Iruñerriko beste herrietako lekukotzak ere. Gehienak Maiorak (2011) eman ditu ezagutzera, Arlegiko eta Iruñeko 1581ekoak, Iruñeko 1593koa eta Burlatako 1670ekoa izan ezik. Azken hori Sarasolak jaso zuen (*ConTAV* § 5.2.4), Idoateren lanetik hartua; besteak Santaziliak (2018 eta 2019). Ez dakigu zein agiritan dagoen eta, beraz, ezin izan dugu jatorrizkoa ikusi.

Bestalde, Maiorak (2011: 27) emandako 1535eko Iruñeko lekukotasunaz dio 36069 erreferentziadun prozesuan ere esaldi bera agertzen dela. Prozesua oso egoera txarrean dago, orrialdeak oso ahul daude eta erdialdean zulo handi bat dute. Beraz, ez dugu esaldia aurkitu. Horrezaz landara, beste zenbait esaldi ez ditugu aurkitu, batzuk prozesu luzeak izanik zail egin zaigulako, besteak Maiorak emandako erreferentzia oker dagoelako eta zuzena zein den ez dakigulako. Lehen multzoan sartzen da 326236 erreferentzia daraman Osinagako lekukotasuna, ez baitugu prozesu hartan euskarazko esaldia aurkitu. Gauza bera gertatu zaigu 296385 prozesuarekin. Aldiz, dirudienez, Maiorak oker eman zituen Iruñeko 1594 eta 1596ko lekukotasunen erreferentziak. Lehena —29604 erreferentzia duena— 1605eko Espartzako gertakari bati buruzkoa da; 71418 erreferentzia duena, ordea, Kasedako gertakari bati dagokio. Bi horietan ez dugu euskarazko esaldirik aurkitu. Halere, Nafarroako Artxibo Nagusiak prozesu guztien fitxak sareratu dituenez, lortu dugu jakitea 29604 beharrean 296041 dela zuzena; aldiz, 71418 beharrean, euskarazko lekukotasuna duen prozesua 71416 da. Horietan daude euskarazko pasarteak.

Horretaz gain, Maiorak eman ez zituen beste esaldi batzuk aurkitu ditugu berak erabilitako agirietan. Iruñeko 1599an jazotako gertakaria biltzen duen 149088 prozesuko 3v, 6v, 14r eta 26r-ko esaldiak ez zituen Maiorak eman; guk, aldiz, ez dugu aurkitu berak emandako agiri horretako azken lekukotasuna. Gainera, 74650 agiriko 88v orrialdekoa ere ez zuen eman Maiorak.

*2.2.8.20.1. Testuak*

a) Iruñea, 1529; NAN 8541.

<z.g.r> […] le dixo al demandante «vos sois vellaco viejo» en vascuenz. Fueron dichas las dichas palabras deziéndole: *Çu çara vellaco*[265] *çarra*.

b) Iruñea, 1535; NAN 130321.

<…r>[266] […] deziendo el defendiente a la demandante entre otras palabras que al presente dixo que no se acuerda, que mentía, deziéndole en bascuence estas palabras: *Vere aubeco*[267] *liquis orrequin*.[268]

c) Zarikiegi, 1536; NAN 8821.

<z.g. v> […] y a la muger del dicho demandante le dixo assí bien en bascuence: *Eç ayz*[269] *ixilduco, ardançopa matela* y otras palabras injuriosas.

<z.g. v> […] y a la muger del demandante assí bien le dixo assí bien en bascuence: *Ez ayz ixilduco, ardançopa*[270] *matela* y otras palabras feas e injuriosas.

d) Iruñea, 1538; NAN 411.

<z.g. v> […] dixo a la dicha Graciana, quexante, en vascuence estas palabras: *Erroy*[271] *assa, aspaldian*[272] *hi egoçirich ago,*[273] *halquea!*

e) Iruñea, 1538; NAN 63868.

<1r> […] dixo a la dicha Graciana quexante en bascuence estas palabras: *Erroy assa, aspaldian hi egoçirich ago,*[274] *[.]a*[275] *alquea!*[276]

<20r> […] dixo a la dicha Graciana, quexante, en bascuence estas palabras: *Erroy asza, aspaldian egoçiric ago, alquea!*

f) Iruñea, 1562; NAN 198457.

<3r> […] y el dicho acusado le dixo a la dicha quexante en bazcuenze: *Gaysto andurrorreq pagatu dizquedan*. Quiere dezir: «mala, más que mala, que se lo pagaría».

---

265 vellaco] esk. *vellaquo*.

266 <…>] Prozesuak orrialdeetako ertza urraturik du eta ez da ikusten orrialde zenbakia.

267 aubeco] esk. *aubeco* : M *anbeco*. Idazkeragatik <u> <n>rekin nahasteko arrisku handia dago, baina ondoko hitzekin erkatu ondoren <u> dela pentsatzeko zalantza gutxi dago.

268 orrequin] esk. *orequin*.

269 eç ayz] esk. *ecayz*.

270 ardançopa] esk. *ardancopa*.

271 Erroy] esk. *eroy*.

272 Aspaldian] esk. *aspaldiã* : M *aspaldia*.

273 ago] jarraian *o* bat dago tatxaturik.

274 ago] ondotik hizki bat tatxaturik dago, dirudienez <a> izan liteke.

275 *[.]a*] <s> luze baten itxura du falta den letrak, baina ez gaude ziur.

276 alquea] Mk *haalquea* dakar, baina gure iduriko ez da irakurketa ziurra. Ziur irakur daiteke *alquea*; baina aurretik </> batez bereizirik bi hizki datoz, bigarrena <a> da; hala ere, lehenak ez dirudi <h> denik ez baita gainerako <h>-en berdina.

<3v> […] y el dicho acusado dixo a la quexante en bazcuenze: *Andur gaystoa*, deziéndole «mala, más que mala, que se lo havía de pagar».

g) Iruñea, 1563; NAN 294335.

<25r> […] dixo a la acusada: «O, bellaca, bagasa, puta bieja, mala muger». Y a esto la acusante dixo con toda cortesía, comedimiento y paciencia: *Ni naiz emazte andurra*, que quiere dezir «Yo soy mala muger». Y el acusado iterando muchas vezes las mismas palabras dixo: *Bay, bay, puta andurra ayz, puta bagasa, puta andurra*, que quiere dezir «Sí, sí que eres puta, mala muger» e otras palabras semejantes.

<36v> […] y sin causa alguna le començó a injuriar. Y de echo y de palabra lo afrontó, llamándole en bascuence: *Vellaco andurra, marcatua*, que quiere dezir «vellaco malo, marcado».

h) Iruñea 1563; NAN 211216.

<2r> […] oyó que la dicha acusada le llamó al quexante, sin porqué, <2v> en bascuence: *adaburu xarra*. Y que tenía muchos cuernos en la cabeça.

<8r> […] y oyó que la acusada le llamó en bascuence: *Çatoz, guixa charra, adaburu*. Y a esto el quexante le respondió que él le demostraría si era *adaburu* o no.

<35r> […] oyó y comprendió que el dicho Joan de Assiain, quexante, le dixo a la dicha María Martín «¿Tú quién eres, sino una mala muger?», deziéndole en bascuence: *Gayzto andurra,*[277] *nor ayz i? Gaizto*[278] *andur* <35v> *bat bayçic, ançare*[279] *maynguequi goztacen aycenori*.

i) Osinaga, 1572; NAN 326236.

Dezienle en vascuence *preso çara* y respondiéndole él *nay dut çergatic*,[280] que quiere dezir en romance «preso sois» y el acusado le respondió: «Soy contento porque».

j) Arlegi, 1581; NAN 39144

<60v> (...) *su eçara emen çartuco*, que quiere dezir: «no entrareis aquí.»

k) Iruñea, 1581; NAN 294859

<4v> (...) cantando cierta canción en bascuence: «*Lastan enea, lastan enea*».

l) Iruñea, 1583; NAN 119428.

<5r> […] passando este testigo por la calle y puerta de la casa de la dicha María de Essain, acusada, oyó que dixo desde la ventana con alguna manera de cólera: *Ayzpa bioc*, que quiere dezir en romez: «Dos hermanas».

---

[277] andurra] hizki bat tatxaturik du amaieran, <a> dirudi.

[278] gaizto] <a> eta <z>ren artean, gainkaldean beltzune bat dago, agian <i> lerro artean sartu nahian.

[279] ançare] esk. *ancare*.

[280] nay dut çergatic] testu zatiaren argazkia dakar Mk (2011: 72); irakurketa mantendu dugu, baina *çergatic* ondoren argazkian uler ez ditzakegun hainbat hizki datozela dirudi.

<11v> […] dixo a la dicha acusada «puta borracha», deziendo así bien en bascuence: *hordi çarra*.

m) Iruñea, 1593, NAN 12399.

<62v> […] *alqueric çaude bellaco villau batequi*! Que en romançe quieren dezir: «con berguença estays con un bellaco villano como ese».

n) Iruñea, 1594; NAN 296041.

<4r> Le dixo al dicho Martín Despinal en pleno ajuntamiento a daltas vozes semejantes palabras en bascuence: *Alqueric*[281] *uquindu baçindu, eçinan etorrico onera*, que quiere dezir: «Si hubierais berbuença, no binierais acá»…

o) Iruñea, 1596; NAN 71416.

<64v> […] y le respondió en bascuenç:[282] *Bay, arengatic jelosiric jaunagana, atra çuen*[283] *Adoainenetic,*[284] *hurran içandu çuen jaunac*, que quieren dezir: «Sí, por eso teniéndole celos con su señor, le sacó la señora de casa de Adoain, cerca le hubo el señor».

<65r> […] y el dicho Ayerra le respondió en bascuenz semejantes palabras: *Nago, eguiaz here nic herran dudala, nescato hura estagola bere hondran*, que quiere decir en romance: «Estoy, según quieren decir que yo he dicho, que aquella moça no'sta en su honrra».

<68v> […] y la dicha moça les respondió en bascuence estas palabras: *Omen dio eçe*[285] *ençun duela estagola bere hondran nescatoa*, deciendo por la dicha Catalina de Orondriz, que quieren dezir las dichas palabras: «Que dize que a oido que no está en su honrra la moça».

<68v> […] le respondió semejantes palabras en bascuence: *Herran omen diote us eguinic dagola nescatoa eta arrengatic ez omen da joan. Len ere bere içebac bere dendan*[286] *aurquitu omen çuela alcate Liedenaren mutilarequi eta arengatican atera omen çuen echetic*, que quiere dezir: «Diz que le an dicho que está criada la moça, que por eso no fue. Y que antes y todo su tía dizen le havía allado en la entrada de su casa con un criado del alcalde Liédena y que por eso le havía hechado de su casa».

p) Iruñea, 1599; NAN 149088.

<2v> […] y sin que ninguno le huviese hablado dixo: «*Çucu guti* aquí está», que en romance quiere dezir: «Poco caldo aquí está».

<3r> […] y le dixo al dicho quexante sementantes palabras: *Çucu guti emen dago*, que en romance quiere dezir: «Poco caldo aquí está».

---

281 alquiric] esk. *alquiric* : M *alquirit*.
282 bascuenç] esk. *bascuenc*.
283 çuen] *esk. cuen*.
284 Adoainenetic] esk. *Adoainenetic* : M *Adoainetic*.
285 dio eçe] esk. *dio eçe* : M *diozçe*.
286 dendan] esk. *dendan* : M *deudan*.

<3v> […] y dicho por el dicho acussado semejantes palabras: *Çucu guti emen dago*, que en lengua castellana quiere decir: «Poco caldo aquí está».

<6v> […] y dixo dirigiendo al dicho Beltrán de Ostabat semejantes palabras: «*Çuqu guti* aquí estás», que en lengoa castellana quiere dezir: «Poco caldo aquí estás».

<14r> […] y dirigiendo a él sus palabras le dixo con mucha cólera y menosprecio: «aquí estás tú, *çucu guti*», qu'era tratarlo por hombre de poco ser y suerte y por ruin.

<26r> […] y dirigiendo a él sus palabras le dixo con mucha cólera y menosprecio: «Aqui estás tú, *çucu guti*», que'ra tratado por hombre de poco ser y suerte y por ruin. […]

Antes que el dicho Martín de Berástegui diese el bofetón a Beltrán de Ostabat quexante le dixo al dicho Berástegui en bascuence: *Çiquin çarra*, que en lengua castellana quiere decir: «Suciaco».

q) Iruñea, 1600; NAN 296385.

<…> […] le respondió que tenía la suegra rezia y que no havía quien bibiese con ella en bascuence deziendo: *Bortiza suela*.

r) Iruñea, 1605; NAN 57415.

<…>[287] […] que el dicho quexante havía echo perjurar a los testigos tratándole de bos en bascuence diziéndole: *çuc*, y no nombró qué testigos [..] que dixo en bascuence […] las palabras seguientes: *Çuc perjura eguin*[288] *çina*[289] *aytorrey*, que quiere dezir: «Bos hizisteis perjurar los testigos».

s) Artika, 1606; NAN 266511.

<…> […] y la dicha Catalina, respondiéndole que sí le tornó a replicar con amenaças de muerte en su lenguaje bascongado deciendo: *Bay, bada,* que propiamente denota pronóstico de algún grave y cruel delito.

t) Iruñea, 1612; NAN 133897.

<3v> […] el dicho quexante principió a decir a Mari Martín de Beruete, muger del dicho quexante, que estava en la puerta también travajando, sin que hubiese bisto ni oído, le hubiesse dado ocasión de palabra ni de otra manera, a vozes y de manera que muchos de la calle lo oían, las seguientes palabras en bascuence: *Heure on artuengatic dausquin galça parea*, que, según este testigo y los demás que lo oyeron, las dixo a mál fin, dando a entender que, por lo que se havía aprobechado d'ella, tenía y le havía dado las dichas medias.

<4v> […] y sin más ocasión le respondió con mucha cólera y con ánimo de injuriarla a bozes que callasse, deciéndole en bascuence las seguientes pa-

---

[287] Orrialdearen ertzak hautsita daudenez, ezin izan dugu orrialdearen zenbakia jakin.

[288] eguin] esk. *eguin* : M *aguin*. Eskuizkribuak zulo bat du hitzaren hasieran eta ez da ondo irakurtzen.

[289] çina] esk. *cina* : M *çena*. Hitza orrialdearen ertzean dago eta ez da erraza osorik irakurri eta interpretatzen.

labras: *Galçac baldin baytun, eneac*[290] *heure on artuengatic dausquin baldinba*. Dándole a entender que si las medias d'el tenía hera por lo que se havía aprovechado della.

u) Iruñea, 1632; NAN 74650.

<88v> […] y la dijo, según le parece, estas palabras: *A, sorguin*[291] *charraren gestu orrequi emendic pasacen aiz irris*,[292] que quiere decir: «Con tu mal gesto de bruja passas por aquí reyendo».

<110v> […] que la dicha María de Beriain dijo a la dicha Mariana estas palabras: *Çoaça, sorguin gestua*, repetiéndolas dos o tres vezes, que en nuestro modo de decir quiere decir: «Bete, cara o gesto de bruja».

v) Iruñea, 1640; NAN 287132.

<14v> […] a lo cual la dicha quexante le dixo en bascuenz y por ser costumbre en ella: *Aurra, çer nayç?*[293] A lo cual el acussado, qu'el no era niño, qu'era más hombre que su marido.

w) Atarrabia, 1647; NAN 102772.

<18v> […] y le dixo este testigo: «¡Calle, comadre! Déxese de pesares». Y la dicha Joana Martín dixo en bascuence estas raçones: *Beguira biute, oquelatu ciquin orieq, estitecela*[294] *sobra barrena sarr, esteçagun cembayt su vitz*, que estas palabras las entiende que quieren decir: «Guárdense no se metan muy adentro, no encendamos algún fuego». Fuele preguntado qué entiende por la palabra *oquelatu* y si save por quién y contra quién dixo las dichas raçones. Y respondió que por las que abló presumió heran dichas contra la presentante y su hija y que la palabra *oquelatu* sospecha que quiere decir <19r> «mala» y «de mala vida».

<19v> […] oyó este testigo que una muger decía: *Vay, vada, vay, bada*. Y otras que se prometía amenaçava con ellas a alguna.

<20v> […] le dixo la reacusada a la hija de la presentante: *Goyae*[295] *ortica, ciquina!* delante de este testigo.

<21v> [...] y el cuarto testigo dice que en una ocasión le dixo a ella la dicha Joana Martín: *Goaye ortica, ciquiña*! delante de este testigo, que le parece que la dicha palabra se entiende a más que decir 'puerca'. […] Y el segundo testigo dice que en otra ocasión dixo la dicha Joana Martín mostrando estar enojada: *Veguira viute, oquelatu ciquin orieq, eztitecela*[296] *sobra barrena sarr, eztezagun cembayt su vitz*, que estas palabras las entiende que quieren decir: «Guárdense no se metan muy adentro, no encendamos algún fuego». Y por

[290] eneac] bigarren <e>-ren irakurketa ez da ziurra. Mk <c> dakar, baina gainerako <e> eta <c>-rekin erkatuz gero, irakurketa egokiena <e> dela dirudi.

[291] sorguin] <n> lerro artean.

[292] irris] lerro artean.

[293] nayç] azken letra ez da oso garbi ikusten.

[294] estitecela] esk. *estitecela* : M *estitcula*

[295] Goyae] irakurketa zuzena bada ere, beharbada, *goaye* da, <21v> orrialdean bezala.

[296] eztitecela] esk. *eztitecela* : M *eztitçula*.

la palabra *oquelatu* dice este testigo que sospecha que quiere decir «mala, de mala vida». Y que también sospecha las dixo por los disculpantes y por su hija por lo que precedió para decirlas, si vien con la palabra *oquelatu* no save si quiso comprehender a las dos o particulariçar a la una, sin embargo que por la mesma palabra parece comprehender a dos.

x) Iruñea, 1652; NAN 75340.

<63v> […] y avía oído dar una voz al dicho herido: *Ay, il nau*.

<64v> Avía oído este testigo una voz que dio el dicho Juanes de Ansoain, que dixo: *Ay, il nau.* Y a esto miró para la dicha casa y vio cómo salió el dicho preguntante sin capa ni sombrero corriendo. Y dio para esta ciudad. Y fue este testigo para el dicho herido, a quien le vio tenía un puñal en la mano dando voces deciendo: *Nere echean il naçala.*

y) Berriozar 1661; NAN 16564.

<…> […] y a estas raçones le respondió el dicho Juan Sanz pressentante en lenguage bascongado: *Ero gucioc*[297] *gure ayde*, que en lenguage castellano quiere decir: «Todos los locos nuestros parientes».

z) Burlata, 1670; NAN.

In nomine patrica
Araguesco patrica.
Castellaco Janicot,
eguidac ipurdian pot.

### *2.2.8.20.2. Iruzkina*

Idazkari batek baino gehiagok idatzitako prozesuak direnez, ez da erraza grafia aldetik sistematikotasunik aurkitzea. Hala eta guztiz ere, ohar zenbait egin daitezke. Inoiz <qu> erabiltzen da <o> aurretik, *vellaquo* (1529), edo <q> hitz amaieran, *orreq* (1562) eta <-ch>: *egoçirich* (1538). Bestalde, <g> grafema, sabaiaurrekoak islatzen du *goztacen* (1563) adibidean. Maizago, <h> espletiboa erabiltzen da: *hi, halquea* (1538), *hordi* (1583), *here*, *herran* (1596); baita hitz hasierako *u*-ren balio bokalikoa islatzeko: *hurran*, *hura* (1596). Amaitzeko, txistukari afrikatua markatzeko joera bakanik bada: *asza*, *assa* (1538), baina agiri berean *asa* dago.

Fonologiari dagokionez, Nafarroan ohikoa den bezala, *ae* > *e* dugu *apez* (1535) adibidean. Kasuren batean, *eu* > *e* egin da *nere* (1652) posesiboan. Inoiz sinkoparik ageri da: *atra* (1596), baina agiri berean *atera* ere badago. Bestalde, *oa-* > *goa-* ohiko bilakabide nafarra daukagu *goyae*, *goaye* (1647) adibideetan. Herskaridun hitz hasiera duten adibide askorik ez bada ere, ahostuna dugu *vitz* (1647) hitzean. Txistukariez den bezainbatez, herskari aurretik neutralizazioa dagoela dirudi: *lastan* (1581) *dausquin* (1612), *estitecela*, *esteçagun*, *estagola* (1647). Dena den, ez dirudi sistematikoa

[297] gucioc] Mk *gucios* dakar. Maiorak esaldiaren irudia dakar eta, egiari zor, irakurketa ez da ziurra. Interpretazioagatik <c> irakurri dugun arren, ez dago argi hala den, baina beste hitzak begiratuz ez dirudi <s> denik.

denik, azken agiri horretan aurrerago *eztitecela* eta *eztezagun* agertzen baitira; *goztacen* 'jostatzen' (1563) ere badago. Beraz, grafia kontua izan daiteke, eta ez neutralizazioa. Ez dago hasperenaren aztarnarik: *çarra* (*passim*), *len* (1596). Dirudienez, **j-* zaharraren ahoskera sabaiaurrekoa da, edo hala interpreta daiteke, bederen: *goztacen* 'jostatzen' (1563).

Morfologiari dagokionez, artikulu hurbilaren adibiderik aurki dezakegu: *aycenori* (1563), beharbada *gaysto andurrorreq* (1562), *bioc* (1583), *gucioc* (1661). Posesiboetan erdiguneko *nere* (1652) dugu behin. Soziatiboan *-reki* eta *-rekin* bi aldaerak aurki daitezke Iruñerriko lekukotasunetan: *maynguequi* (1563), *batequi* (1593) *mutilarequi* (1596), *orrequi* (1612), baina *orrequin* (1535). Instrumentalean bizkarkaria eta apikaria ditugu: *eguiaz* (1596), baina *irris* (1632). Motibatiboan, *arrengatic* eta *arengatic* (1596) eta *artuengatic* (1612) ditugu, baina *arengatican* (1596) erdialdeko forma ere bada. Ablatiboan *echetic* (1596) eta *ortica* (1647) formak agertzen dira. Bizidunen ablatiboan, *-gana* mantentzen da *jaunagana* (1596) adibidean. Erakusleekin, adlatiboan *onera* (1594) berria dugu.

Aditz morfologiara pasatuz gero, aditzoina erabiltzen da indikatibokoak ez diren perifrasietan: *estitecela sarr*, *esteçagun vitz* (1647). Horretaz gain, partizipio pleonastikoaren bi adibide aurkitu ditugu, Nafarroan ezagutzen diren zaharrenak: *uquindu* (1594) eta *içandu* (1596). Adizki jokatuetara pasatzen bagara, *izan* aditzaren orainaldiko erroan *-a-* aurkitu dugu: *çara* (1529, 1572). Iraganean, *-an* bukaera dugu *eçinan* (1594) adizkian. Dena den, **edun* aditzarekin *-en* dugu: *çuen* (1596). Orainaldian, **edun* aditzaren erroa *-u-* da: *dut* (1572), *dudala* (1596). Bestalde, aditz beraren iraganeko forman *-ind-* dugu *baçindu* (1594). **Edun*-en jusibozko adizkia da, bestalde, *beguira biute* (1647) perifrasiko laguntzaileak. *Eduki*-ren pluralgilea *-zki* da: *dausquin* (1612). *Joan* aditzaren aginteran *çoaça* (1612) ageri da. Bestalde, Iruñeko 1562ko esaldian *dizquedan* agertzen da, testuinguruagatik NOR-NORI-NORK saileko pluraleko forma bide da, baina ez dakigu indikatibokoa ala aginterakoa den. Formagatik, 'dizkidan' izan daitekeela dirudi, baina itzulpena kontuan izanda 'diezazkidan' izan liteke.

Sintaxi aldetik, aipagarria da *ayzpa bioc* (1583) hurrenkera, zenbatzailea izenaren eskuinean agertzen baita. Horretaz gain, dirudienez, Linschmann-Aresti legea betetzen da: *estagola bere hondran*; *len ere bere içebac bere dendan aurquitu omen çuela* (1596), *heure on artuengatic dausquin galça parea* (1612), *nere echean il naçala* (1652).

Lexiko aldetik, *ardançopa matela* irakurri behar dela uste dugu, ez *ardancopa matela*. Iraina dela badakigu 'palabras injuriosas' dela dioelako agiriak, baina esanahia zein den ez dakigu. Hala ere, *ardançopa* 'ardo zopa' izan liteke. Beharbada, ardoaren eraginez masailak gorri dituen pertsonari deitzeko erabiltzen zen iraina da *ardançopa matela*. Lehen elementu bera bide du 1547an Iruñean agertzen den *ardanvote*-k (E § 1). Bestalde, aipagarri da *oquelatu* (1647). Agian, *oquelu* (Areso, 1608) hitzarekin zerikusia izan lezake. Prozesuan bertan 'bizimodu txarreko pertsona' definizioa ematen da, zehazki 'mala, de mala vida'; beharbada, 'baztertu, marginatu' izan daiteke esanahia; edonola ere, 'zati-zati egin' adieran erabiltzen du Etxeberri Ziburukoak: *Mianbroak bazterrean dauden okhelaturik, / suge eta xixarien bazka bilhakaturik*. Bestalde, 1596ko lekukotasunean naroki erabiltzen da *omen* partikula. *OEH*k (s.v. *omen*) dakarrenez, XVI. mendetik aurrera maiz lekukotzen da *omen*, eta zaharrena

1578ko Orokietako adibidea da. Horretaz gain, *baldinba* 'ziurrenik' (1612) agertzen da, Zaraitzun ere badago (2.2.8.12). Gainera, ahozkoan, Aezkoan *balima* dago, 'hala izan dadila, ongi izatera' adieran.

Agidanean, *ukan* aditza erabiltzen da: *uquindu* (1594). Horrezaz gain, *hurran* (1596) agertzen da behin eta ekialde osoko *herran* (1596) eta *guti* (1599) aldaerak daude. Etxalekuko koplan ere agertzen den *ançare* (1563) dago Iruñean. Bestalde, *bagasa* (1563) lekukotzen da; *OEH*ren arabera (s.v. *bagats*) Larramendi da lehena lekukotzen, baina esaldi horrekin bi mendez aurreratzen da lehen agerraldia. Beriainek dakarren gisara, *aytorrey* (1605) agertzen da 'testiguei' esateko; dena den, aipagarria da, Beriainena ez bezala, ez dagoela erabilera predikatiboan. *OEH*ren arabera (s.v. *aitor*), predikatiboak dira adiera honetako agerraldi ia guztiak. Iruñeko 1529ko lekukotasunean *aubeco* agertzen da; ez dakigu esanahia zehatza zein den, baina 'aho + behe + -ko' izan daiteke etimologia (ik. § 2.2.8.5).

Aipagarri da, bestalde, *us eguinic* (1596) hitzaren zentzua 'honra galdurik' dela, agiri bereko beste lekukotasunetako *bere hondran ez egotea*-ren pareko. *OEH*n (s.v. *huts egin*; c. adiera) 'abortatu' esanahia ematen zaio, besteak beste, *huts egin* aditz lokuzioari.

Gertakari bera jasotzen duten urte bereko bi prozesutan *halquea* eta *alquea* (1538) agertzen dira 'lotsagabe' esanahiarekin; aitzitik, *alquiric* (1594) agertzen da 'lotsa' esanahiarekin.

Interpretazio zailekoa iruditu zaigu Iruñeko 1612ko lekukotasuneko *Galçac baldin baytun, eneac heure on artuengatic dausquin baldinba* esaldia, batez ere bigarren zatia. Zalantzarik gabe, *dausquin* 'dauzkan' (hik, fem.) da, eta aditzaren objektua *eneac* (*ene galçac*, elipsiarekin). Zalantzazkoa da *on hartu* aditz lokuzioaren esanahia, baina badirudi, itzulpenaren arabera, *aprovercharse*-ri dagokiola. *OEH*n (s.v. *onartu*) ez da esanahi hori agertzen; halere, *heure(tzat) on hartu* zentzu aldetik izan liteke 'zerbait hire probetxurako hartzea', alegia, 'hiretzat on dena hartzea'. Dena den, antzeko beste lekukotasunik ez dugunez, arriskutsua da proposamena, itzulpena alde duen arren.

### *2.2.8.21. Etxauribar*

Nafarroaren erdigunean dagoen Etxauribarko XVI. mendeko bi herritako lekukotasunak ditugu oraingoan. Lehena Etxarrikoa da eta 1554ko agiri batean agertzen den esaldi laburtto bat da. Bestea aurrekoa baino luzeagoa da, Etxaurikoa da eta Etxarrikoak baino euskarazko esaldi gehiago ditu. 1598ko agiri batean daude esaldi horiek.

Egun, bi agiriak Iruñean daude, Nafarroako Artxibo Nagusian, eta biak eman zituen ezagutzera Maiorak (2011: 49 eta 106). Berriki, Santaziliak (2015) Etxaurikoaren irakurketa berria eta iruzkina argitaratu ditu. Etxauriko lekukotasunaren jatorrizkoa ikusi dugu, baina Etxarrikoa ez dugu aurkitu.

#### *2.2.8.21.1. Testuak*

a) Etxarri, 1554; NAN 65827.

> <…> […] le respondió: «Nos dexarem», deziendo en bascuence: *Ecepta uçico ere*.

b) Etxauri,1598; NAN 71558.

<4v> […] y en bascuence dixo, a más de lo dicho, el dicho acusado las palabras siguientes: *Berche alacoric ere*[298] *baçela*. No sabe este testigo si lo dixo por el dicho quexante o por quién.

<5v> […] y acudiendo a esta razón dixo más el dicho acusado las palabras siguientes en bascuence: *Berçe bat*[299] *ere estago urruti mediante juramento*[300] *arrtu çuela falsoro juezaren*[301] *firma bague,*[302] *bere firma berarequi, cerbayt iradoquico çiola gudus.*[303] *Eta joaninça aurreco escribauarengana*[304] *eta erran draut eçela aren echetic alaco despachuric probeitu. Eta acheguin ar bes eçe arc*[305] *pagatuco dit salsa.*[306]

<6r> […] *eta aren autoa* […].

<10r> […] que el dicho acusado en bascuence havía dicho las siguientes: *Orayngo guiza aldartean nay dudana pasatuco dut*.

<11v> […] que al dicho Amburcea le havía condenado en los daños y menoscabos y en bascuence las palabras siguientes: *Orayco guiça aldartean arracioric batre baldin badaucat,*[307] *estaut Amburceac orayco aldian nay duenic pasatuco*. Y que dixo más: *Bay eta escribau batec juramentu arrtu cerauda, eta es omen çen alcateen baitan firmatu. Eta escribauagana*[308] *aguertu ninça*[309] *eta galdetu nio ene contra*[310] *atera den emendic*[311] *mediante*[312] *juramentu bat eta erran çerauda es*.

*2.2.8.21.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, ez dugu garbi ikusten zer den Etxarrikoan agertzen den *ecepta*-ko <p> hori; 'ez eta' ulertu behar bada, lekuz kanpo legoke <p> hori. Beharbada, beste hitzen baten eragina izan liteke.

Fonologiari dagokionez, badirudi hitz amaieran eta herskari aurretik txistukaria apikariaren alde neutralizatzen dela: *bes*, *es*, *estago* (1598). Latinetik datorren *ratione* maileguan *-zoi* > *-zio* gertatu da: *arracioric* (1598). Bestalde, *-rz-* kontsonante multzoa mantentzen da: *berçe* (1598).

Moduzko adberbioak egiteko *-ro* erabiltzen da: *falsoro* (1598). Bizidunekin *baita*- erabiltzen da, *alcateen baitan* (1598), baina adibide horretan ematen du 'alkateen artean' esan nahi duela. Gainera, adlatiboan *-gana* erabiltzen da: *escribauagana* (1598). Instrumentaleko aldaera apikaria izan liteke: *gudus* (1598); halere, interpretazioan za-

298 ere] aurretik *egui* dago tatatxurik
299 berçe bat] esk. *berçe bat* : M *berçibat* : S *berçe bat*.
300 juramento] esk. *juram*[to].
301 juezaren] *eta aren autoa* tatxaturik aurretik.
302 bague] esk. *bague* : M *basue* : S *bague*.
303 gudus] esk. *gudus* : M *sudus* : S *sudus*.
304 escribauarengana] esk. *escribauarengana* : M *escribauarensana* : S *escribauarengana*.
305 arc] esk. *arc* : M *pare* : S *arc*. Hitzak hasieran tatxaturiko letra bat du.
306 salsa] esk. *salsa* : M *falsa* : S *salsa*.
307 badaucat] hitza zuzendurik dago; dirudienez, lehenago *badautac* jarri zuen eskribauak.
308 escribauagana] esk. S *escribauagana* : M *escribauazana*.
309 ninça] esk. *ninca*.
310 contra] esk. *con*[a].
311 emendic] *-dic* aurretik *-dic* dator tatxatuta.
312 mediante] esk. *me*[te].

lantza dugu hitz honekin; ik. beherago. Soziatiboan *-reki* aldaera erabiltzen da: *berarequi* (1598). Aditzei dagokienez, **edun* aditzean *-u-* da orainaldiko erroa: *dudana*, *dut* (1598). Horrezaz landara, **eradun* aditzaren aldaera osoa, sinkopatua eta *-r-* gabea, hirurak erabiltzen dira indikatiboko NOR-NORI-NORK sailean: *arrtu cerauda*, *erran çerauda*, *erran draut*, *estaut [...] pagatuco* (1598). Halere, *-i(n)-* erroa ere erabiltzen da: *pagatuco dit* (1598). Bestalde, iraganeko adizkietan *-n* galtzen da: *joaninça*, *arrtu cerauda*, *agertu ninça*, *galdetu nio*, *erran çerauda* (1598); salbuespen gisa *çen* (1598) ageri da. *Izan* aditzaren iraganeko formetan *-e-* eta *-a-* ditugu: *ninça*, *çen* (1598). **Ezan* erabiltzen da NOR-NORK saileko indikatibokoak ez diren perifrasietan; gainera, bukaerako *-a* galtzen du adizkiak: *ar bes* (1598).

Aldaera lexikoei dagokienez, *erran* (1598) ageri da. Bestalde, *orayngo* eta *orayco* (1598) biak daude; txandaketa hori arrunta bide da, Aezkoan esate baterako biak erabiltzen dira. Zalantzazkoetan *gudus* (1598) dugu, ez baitakigu zehazki zer den. Maiorak eta Santaziliak *sudus* irakurtzen dute, eta Santaziliak berak 'interesez' gisa interpretatu. Nolanahi ere, gure ustez ez da dudarik *gudus* irakurtzeko.

### *2.2.8.22. Izarbeibar*

XVII. mendeko Izarbeibarko lau lekukotasun dakartzagu jarraian. Lehena Utergakoa da, 1602koa; lehenengoz Idoatek (1997 [1954]: 515) jaso zuen, eta ondoren Satrustegik (1977: 11) gogora ekarri zuen. Ez dakigu non dagoen, ezta zein agiritan agertzen den; beraz, ezin izan dugu jatorrizkoa ikusi. Bigarrena Muruzabalen 1605ean izandako gertakari baten auzi-agirian agertzen da eta Maiorak (2011: 115) eman zuen ezagutzera. Berrikiago, Santaziliak (2015) irakurketa berriarekin berrargitaratu du. Muruzabalgo esaldi hori jasotzen duen agiria Iruñeko Artxibo Nagusian dago eta jatorrizkoa ikusi dugu. Hirugarrena, Adiosen jaiotako bi anaiaren aurka 1650 inguruan izandako auzi-agirian dago jasoa. Urrizolak (2004) eman zuen lehendabizikoz ezagutzera. Dena den, berak ez zituen eman prozesuko 203 eta 229 orrialdeetan dauden aldaerak. Horiek geuk aurkitu ditugu agirian begiratzean. Azkena, testuetan berriena, Añorbekoa da eta Satrustegik (1981: 99) eman zuen ezagutzera.

#### *2.2.8.22.1. Testuak*

a) Uterga, 1602.

> *Badiqueat orraa bofeton bat aurrari beçala*, que vuelto al castellano quiere decir: «Bien te dará hacia aí un bofetón, como a niño».

b) Muruzabal, 1605; NAN 149615.

> <5r> [...] le dixo a este testigo el dicho Joan de Gares, acusado, en presencia de Antón de Suarrondo, estas palabras y razones en bascuence: *Badariçosu erran*[313] *dausquidala arraçeonac*.[314] Y a esto le dixo este testigo en su dicho bascuence: «¿Qué razones os a dicho?».

---

[313] erran] esk. *eRan*.
[314] arraçe] esk. *aRaçeonac*. 'arrazeo onak, arrazio onak'.

c) Adios, c. 1650; NAN 179129.

<181r> […] dijo la dicha Juana de Cía en su bascuence: *Bay, Jaincoach nai badu ni, nondiq orrattu*[315] *etta nondic jan bear çutte?,* que en castellano quiere decir: «Sí, si Dios quiere yo, de dónde ahorrar y de dónde habían de comer».

<203r> […] y en su pressencia le preguntó el dicho don Martín a la dicha Juana de Cía y propusso en lengua bascongada: *Juana, badaquizu nola çor nayçun Çaragozaco arçobispoaren*[316] *erraçiotatiq*[317] *anis diru eta, juan vaño lenago Garessa, eguin çadaçu claredade bat*. A lo cual le respondió ella en la misma <203v> lengua: *Suc bay ni çor anis diru etta doblorac*[318] *ere bay*, en la bulgar y castellana quiere decir: «Juana, bien savéis que me devéis del tiempo que estubimos en Çaragoza muchas cantidades, y assí será mejor que me agáis una claredad», que lo que ella le respondió fue decir: «Sí, por cierto. ¿De dónde le avía de dever yo? Él sí a mí muchos dineros y los doblones».

<229v> […] cómo el dicho licenciado Eguiarretta le dijo y propusso estas raçones a la dicha Juana de Cía en palabras bascongadas: *Juana, badaquiçu*[319] *nola çor naizun Çaragoçaco*[320] *arçobispoaren*[321] *erraciotatic*[322] *aniz diru etta, guan bano lenago Garessa, egin çaçu claredade bat*. A lo cual le respondió la dicha Juana de Cía en la misma lengua: *Çuc bay niri çorr*[323] *anis diru*, que en el bulgar castellano quiere decir: «Juana, bien saves que me deves del tiempo que estube en Çaragoça muchas cantidades y assí será mejor que me agáis una claredad'. Y lo que ella le respondió: 'Si, por cierto. ¿De dónde le avía de dever <230r> […]».

<240v> […] vino el dicho licenciado Eguiarretta a donde estava la dicha Juana de Cía y le dijo en palabras bascongadas […] que fueron las siguientes: *Juana, badaquiçu nola çor*[324] *naiçun Çaragoçaco*[325] *arçobispoaren*[326] *erraciotatic anis diru eta, juan baño lenago Garessa, eguin çaçu*[327] *claredade bat*. A lo cual le respondió ella en la misma lengua: *Çuc bay niri çor*[328] *anis diru*, que en lengua vulgar y castellano quiere [decir]: «Juana, bien sabes que me debes del tiempo que estubimos en Çaragoça muchas cantidades y assí será mejor que me hagas una claredad».Y lo que ella le respondió: «Sí, por cierto. ¿De dónde le había de deber yo? Él sí a mí muchos dineros». Y en cuanto los doblones que narra la pregunta no oyó razonar sobre ellos en la dicha ocasión.

---

[315] orrattu] <a> eta <t> artean beste zerbait dago, agian beste <t> bat, nahiz eta marra horizontalak ez duen ukitu. Beherago antzeko zerbait dago gaztelaniazko hitzetan.

[316] arçobispoaren] esk. *Arcobispoaren*.

[317] erraciotatiq] *-ta-* lerro artean.

[318] doblorac] irakurketa garbia bada ere, *doblonac* espero genuke.

[319] badaquiçu] esk. *badaquicu*.

[320] Çaragoçaco] esk. *Caragocaco*.

[321] arçobispoaren] esk. *Arcobispoaren.*

[322] erraciotatic] <o> aurretik letra bat tatxaturik, ziurrenik <t>.

[323] çorr] esk. *corr*.

[324] çor] esk. *cor*.

[325] Çaragoçaco] esk. *Caragoçaco*.

[326] arçobispoaren] esk. *Arcobispoaren*.

[327] çaçu] esk. *cacu*.

[328] çor] esk. *cor*.

d) Añorbe, 1659; IEA, C1048, 18. zk.

> <...> El acusado alegó en descargo que Sagüés le provocó, diciendo: *Ori bezain ona naiz*, «soy tan bueno como él».

*2.2.8.22.2. Iruzkina*

Grafia aldetik azpimarratzekoa dirudi Adiosko lekukotasunean agertzen diren bukaerako <ch> eta <q>: *Jaincoach* eta *nondiq* (1650). Bestalde, prozesu berean <tt> agertzen da: *çutte*, *orrattu*, *etta* (1650). Gainera, *guan* (1650) adibidean ikusirik, interpreta liteke <g> sabaiaurrekoa islatzeko erabiltzen dela.

Fonologiari dagokionez, *au* > *ai* gertatu da Adiosko *naiçun* adibidean ikus dezakegunez. Bestalde, esaldi berean den *juan* aditzak erakusten du *oa* > *ua* bilakabidea indarrean dela. Kontsonanteei dagokienez, diptongo ondotik sabaikaritze automatikoa gertatzen dela dirudi: *baño* (1650). Azkenik, maileguetan *-on* mantentzen da, goi-nafarreraz ohi denez: *bofeton* (1602) eta *doblorac* (1650) badago ere, *doblonac* espero genuke.

Morfologia aldetik, aipatzekoa dirudi leku-izen bereziekin adlatiboan agertzen den *-a: Garessa* (1650). Aditzetara pasatuz gero, trinkoetan *eritzi* eta *jakin* aditzen indikatiboko formak ditugu: *badariçosu* (1605) eta *badaquiçu* (1650). Halaber, behin *-i(n)-* erroaren *badiqueat* 'emango diat' (1602) geroaldikoa trinkoa agertzen da (cf. *RS* 233 *Yquedac ta diqueada*). Perifrasietan, **eradun* dago indikatiboko NOR-NORI-NORK sailean: *dausquidala* < **derauzquidala*. Agerraldi horrek duen berezitasuna da *derau-* > *dau-* bilakabidearen adibide goiztiarra izatea; baina ik. § 2.2.8.21. Iraganeko adizkiek amaierako *-n* galtzen dute: *çutte* (1650). Adiosko 1650eko lekukotasunean *eguin çaçu* eta *eguin çadaçu* biak agertzen dira. Azkenik, aditzaren erregimenaz den bezainbatez, *zor* aditzak NOR-NORK laguntzailea eskatzen du: *çor naiçun* (1650).

Lexiko aldetik, *erran* (1605) erabiltzen da. Bestalde, Muruzabalgo lekukotasunean *arraçeo* 'arrazoi' (1605) dago. Horretaz gain, Adioskoan bertan, *orrattu* (1650) ageri da 'aurreztu' esateko.

*2.2.8.23. Elortzibar*

Aski laburra da Elortzibarko lekukotasun bakar hau. Nafarroako Artxibo Nagusiko 200812 erreferentziadun agirian agertzen da eta Maiorak (2011: 127) eman zuen lehendabizikoz ezagutzera. Jatorrizkoa ikusteko aukera izan dugu.

*2.2.8.23.1. Testua*

a) Elortz, 1613; NAN 200812.

> <z.g. v> […] y oyó que el dicho quexante dixo en bascuence: *Nortio?* que quiere dezir en castellano: «¿Quién lo dize?».

*2.2.8.23.2. Iruzkina*

Agirian bertan den gaztelaniazko itzulpenak erakusten duenez, *nortio* horren atzean 'nork dio' dago. Beraz, ikus daitekeenez, *-k + d- > -t-* asimilazioa islatzen du. Horrezaz landara, **io* aditzaren forma trinkoa agertzen da.

*2.2.8.24. Itzagaondoa*

Itzagaondoko lekukotasun zahar bakarra ezagutzen dugu. Hain zuzen ere, 1575ean Erretan izandako auzi batean agertzen dira jarraian datozen euskarazko bi lekukotasunok. 132043 erreferentziadun prozesuan daude, 60v eta 64r orrialdeetan. Agiri horretan lekukoen euskarazko adierazpenak idatzirik jaso ziren. Xabier Itulainek (2013) eman zuen ezagutzera Facebook sare sozialean eta Gorka Lekarozek (2014) ere lekukotasun honen berri eman zuen. Gure edizioa prestatzeko jatorrizkoa ikusi dugu, baina Itulainen (I) eta Lekarozen (L) irakurketak kontuan izan ditugu eta aparatu kritikoan aipatu ditugu beraiekin ditugun desberdintasunak.

*2.2.8.24.1. Testuak*

a) Erreta, 1575; NAN 132043.

> <60v> […] que en el dicho lugar de Reta a los vezinos d'el les a oído dezir por publica voz y fama y común hablar nombrar la viña contenciosa, la viña de la abbadía del dicho lugar, deziendo en bascuence: *Apezteguico ardançea* y del abbad.
>
> <64r> Y a este testigo diberssas vezes le dixo, meneando su braço, las palabras siguientes en bascuence: *Arren,*[329] *borz urrea,*[330] *biar Jayncoaren*[331] *ardançera adarnara eta*[332] *layara*, y otras vezes *ene apezteguico ardançera*, que en romance quieren dezir: «Mañana a la viña de Dios a podar e layar», y otras vezes «A la viña de mi abbadía».

*2.2.8.24.2. Iruzkina*

Fonologiaz den bezainbatez, *-rz-* kontsonante multzoa ageri da: *borz.* Izen morfologiari begiraturik, *ene* posesibo arrunta ikusten dugu. Bestalde, hitz eratorpenean *-tze* aldaera agertzen da: *ardançea*.

Lekukotasun honek izan litzakeen zailtasunen artean dago *borz urrea*ren interpretazioa. Itulainek ez du hitzaren interpretaziorik eskaintzen; aldiz, Lekarozek *borztzortza* izan daitekeela iradokitzen du. Beste aukera izan liteke *urrea* 'urrezko txanpon' gisa ulertzea (ik. *OEH* s.v. *urre* bigarren esanahia). Dena den, gaude orduko prezioak zertan ziren ez badakigu ere, garesti xamar zela urrezko bost txanponekin ordaindu behar izatea. *Adarnara* 'inaustera' dela eta, *OEH*n jasotzen denez (s.v. *adarnatu)* goi-nafarre-

---

[329] arren] esk. I L *aren*.

[330] urrea] esk. *vrrea* : I L *orrea*. Interpretazio zailekoa da. Hitzaren hasiera ez da garbi ulertzen, baina badirudi *vr-* dela.

[331] jayncoaren] esk. *jayncoarē*.

[332] et] eskuizkribuan, laburdura moduan, biribil batean sartutako <e> dago.

razko hitza da eta Azkuek jaso zuen. Dena dela, *adarratu*ren ordezko irakurketa akatsa izan daitekeela esaten da. Lekukotasun honek erakusten du ez dagoela inolako akatsik eta *adarna* dela hitza, *hapax*-a den arren. Etimologia zehazki zein den ez badakigu ere, *adar + na* izan liteke, *bana*, *bina* hitzetan dugun adizki bera. Ondoren, hortik sortua izango litzateke *adarnatu* aditza *bana*-tik *banatu* ateratzen den bezala.

### *2.2.8.25. Urraulbeiti*

Urraulbeitiko lekukotasun zahar bakarra iritsi zaigu, momentuz bederen. San Vicenten 1578an jasotako testigantza bat da. Santaziliak (2019) aztertu du prozesua bera eta bertan dauden euskarazko pasarteak.

#### *2.2.8.25.1. Testua*

a) San Vicente, 1578; NAN 11330

<56r> Le dijo en bascuençe: *borracho xarquia*, que se le quitase de allí, y el dicho Arielz le respondió que el no era vorracho, pero que el dicho Villanueba era un guitón, deziendole también en bascuençe *guiton çarra.*

<57r> (...) que el dicho Joan de Villanueba, muy alborotado y puesto en colera, dixo al dicho Pedro de Arielz, acusado, que se le quitase de allí, deziendole en bascuençe: *quen aquit ortic, vorracho dollor xarrori*!

<59r> (...) oyó y comprehendió que el dicho Joan de Villanueba dixo al dicho Arielz «que amagays borrachuelo ruyn», deziendole las dichas palabras: *Borracho xarr, guiton xarra*!

<60r> (...) y como el dicho Joan de Villanueva dixo a Pedro de Arielz con mucha colera y demostración de estar enojado, en bascuençe: *Dollor xarrorrec*[333] *guiçonari atra bear badio puñalori*! que quieren dezir «el ruyncillo, sí ha de rancal el puñal al hombre».

<61r> (...) que el dicho Joan de Villanueba dixo a Pedroniz de Ariel(z), acusado, en bascuençe: *Dollor vorracho xarra*!

<74r> (...) y comprehendió este que depone que dixo en bascuençe: *Ala ffede, bada!*, que en castellano quiere dezir «Pues a ffee!».

<206r> (...) en bascuençe semejantes palabras destas: *Çoaz deabruetara, guilote vorracho çarquiori, erromessori! Çertaco çagozquit niri coartel galdez? Paga eçaçu*[334] *çuc çor duçuna Pedro Salari*, que quieren dezir en romançe: «¡Iros a los diablos, guitón, borracho, ruyn, romero! ¿Para que me estáys a mi pidiendo los quarteles? ¡Paga vos lo que debéys a Pedro Sala!»

#### *2.2.8.25.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, zalantzazkoa izan daitekeen arren, badirudi sabaikaritze adierazkorra dugula *xarquia*, *xarrori*, *xar* eta *xarra* adibideetan; *çarra* ere badago. Adibide horietan ikusten denez, ez da hasperenaren arrastorik gordetzen. Sinkopa dagoela dirudi: *atra*.

---

333 xarrorrec] esk. *xarraorrec*

334 eçacu] esk. *eçacu*. Ondoren zerbait dago tatxaturik.

Morfologian, artikulu hurbilaren zenbait adibide ditugu: *xarrori*, *xarrorrec*, *puñalori*, *çarquiori*, *erromessori*. Aditzari dagokionez, aditzoina mantentzen da: *quen aquit*, *paga ezazu*.

### *2.2.8.26. Agoitzaldea*

Nafarroako eskualdeekin jarraituz, Agoitzaldekoak dira ondotik datozen lekukotasunak. Orotara lau dira bertako lekukotasunak: Irunberriko bi (1575 eta 1629), Urrozko bat (1582) eta Artaxoko beste bat (1696). Irunberrikoak eta Urrozkoa Nafarroako Artxibo Nagusiko hiru prozesutan daude; aldiz, Artaxokoa Iruñeko Elizbarrutiko Artxiboan gordetako prozesu batean.

Hain zuzen ere, Artaxokoa Satrustegik (1978-79) jaso zuen lehenengoz; eta guk jatorrizkoa eskutan izan dugu. Aldiz, 1575eko Irunberriko eta Urrozko lekukotasunen berri Maiorak (2011: 75 eta 80-81) eman zuen. Irunberriko lekutasuna dagoen ustezko prozesua eskutan izan ditugu, baina ez dugu euskarazko pasarterik aurkitu duen, bai, aldiz, Urrozkoa.

Azkenik, Irunberriko 1629ko esaldia Sarasolak (*ConTAV* § 5.3.1) jaso zuen, baina ez zuen eman prozesuaren erreferentzia zuzenik. Esaldia jasotzen duen agiriaz emandako informazio bakarra da Nafarroako Artxibo Nagusian dagoela, 1629an Irunberriko Leireko monasterioaren aurka abiatutako prozesuko 2. fajoan, 13. zenbakiarekin eta 290v orrialdean. Artxibo Nagusiko langileekin hitz egin ondoren, jakin dugu prozesuaren erreferentzia 30498 izan daitekeela, baina orrialde horretan eta ingurukoetan ez dago euskarazko lekukotasunik. Gainera, prozesu potoloa da, 1.000 orrialde baino gehiago ditu, eta ez dugu esaldia aurkitu.

#### *2.2.8.26.1. Testuak*

a) Irunberri, 1575; NAN 69220.

> <…> Y en esto vio que dezía Juan Calbo, vezino de la dicha villa, a los otros vezinos, sus aderidos, amotinándoles: *Odolqui, odolqui bear dela*, que quiere dezir: «Sangre, sangre es menester». Y en esto, este testigo le reprendió deziéndole si no tenía bergüença un ombre de sus años hablar lo susodicho y alborotar a los bezinos, el cual tornó otra bez a dar mayores vozes y dezir: *Odolqui, odolqui bear da*, de lo cual vio que se alborotó mucho el pueblo a favor de dicho Juan Calbo.

b) Urroz, 1582; NAN, 99059.

> <62v> […] dixo el delincuente y acusado al dicho Harnaut de Billanueba en bascuence, oyéndolo muy bien este testigo: *Guiçona*[335] *char duc buffeta bat*[336] *emanagatic quexassen*[337] *den ha*, y que quiere dezir: «Ruin es el hombre que por un bofetón que le dan se quexa».

[335] guiçona] esk. *guicona*.
[336] bat] jarraian zerbait tatxaturik dagoela dirudi.
[337] quexassen] <x> lehenagotik idatzitako <ss> gainean jarrita dago.

c) Irunberri, 1629; NAN 30498, fajo 2º, 13. zk.

<290v> […] y a un hermitaño capón que hiba con los de Lumbier vio que con muy gran brío y desenvoltura dexó su capa en suelo y al que tenía el palo de la cruz suya de la dicha villa se la quitó, diciendo estas palabras en bascuenz: *Indac onat maquil ori, nic adituco diat fraide hoc*, que quiere decir en lengua castellana: «Daca acá ese palo, que yo entenderé a estos frailes», y diciendo y haciendo alzó el dicho palo.

d) Artaxo, 1696; IEA, C996.

<1v> Iten que antes de aora tiene turbada la paz de mis partes el dicho vicario, pues aora tres años la víspera o día de S. Juan Baptista, hallándose entreteniendo el dicho vicario con el Abad de Mugueta en la casa de Ansorena, concurrió el dicho Francisco, mi parte, y le instaron tragese un jarro de vino. Y, por que se tardaba algo, le dixo el dicho vicario en presencia de los que se hallavan entreteniendo estas palabras: *Joanix baituc eta hizanen tuc*. Palabras que en la inteligencia de aquel país significan en castellano: «Ser hombre y marido desgraciado en su honrra». Y assí las entendió el dicho Francisco, pues se fue en drechura a su casa, a donde quiso matar a su muger y con efecto la golpeó mucho. Y cada día lo ejecuta y da en rostro, y de resulta estubo la dicha María a la muerte dada la extremaunción.

*2.2.8.26.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, azpimarratzekoa izan daiteke afrikatua markatzeko saiakera <ss> digrafoa erabiliz: *quexassen* (1582). Adibide berean dagoen <x> sabaiaurrekoa bide da, gaztelaniazko *quexa* hitzean ere sabaiaurrekoa baitugu (ik. Company & Cuétara 2008 [2014]: 234).

Fonologia aldetik, oro har, ez dirudi hasperena dagoenik: *bear* (1575), *onat*, *ori* (1629). Halere, agidanean, hasperenaren arrastorik mantentzen da: *fraide hoc* (1629) eta *quexassen den ha* (1582) adibideetan. Gainera, Manterolak (2015: 329) erakusten duenez, *den ha* bereizketa horrek iradoki lezake artikulutik baino erakusletik hurbilago dagoela *ha*. Beraz, <h> hasperentzat hartzen badugu, erakusleen protoformaren aurrean geundeke.

Izen morfologiari dagokionez, lehen pertsonako *ene* izenordain posesibo zaharra agertzen da. Bestalde, artikulu hurbila dago, itxuraz erabat gramatikalizatu gabe: *fraide hoc* (1629). Erakusleekin, adlatiboan *-at* agertzen da: *onat* (1629). Aditz morfologian ikusten dugunez, geroaldia egiteko *-en* erabiltzen da *-n* bukaera duten aditzekin: *hizanen* (1696). Artaxoko lekukotasun horrek badu bere interesa, *baituc* eta *hizanen tuc* interpretatzeko orduan. Iduriz, pluraleko adizki aferesidunak dira 'baitituk' eta 'izanen dituk'. Hala izatekotan, aferesia duten lehen lekukotasunetarik lirateke. Horrezaz gain, **edun* aditzaren orainaldiko errotzat *-u-* erabiltzen da: *duc* (1582). Aditzekin amaitzeko, nabarmena da trinkoen erabilera aginteraz: *egon* aditzaren *ago* (1597) eta *-i(n)-* erroaren *indac* (1629).

Sintaxian, konpletibozko perpausetan *-ela* agertzen da: *odolqui bear dela* (1575). Halaber, *emanagatic* (1582) adibidean ikus daitekeenez, [partizipioa + *-agatik*] egitura erabiltzen da kausazkoa eta aspektu burutua adierazteko. Gainera, ez dirudi pluraleko komunztadura beharrezko denik: *nic adituco diat fraide hoc* (1629).

Lexikoaz den bezainbatez, *odolqui* (1575) agertzen da, eta gaztelaniazko ordaina 'sangre' da. Dena den, ez da beste inon lekukotu forma hori adiera horrekin. Artaxoko 1696ko esaldian dagoen *Joanix* horren gaztelaniazko esanahia 'desgraciado en su honrra' da. Hitz horrek duen balio peioratiboaren adibide gehiago eman zituen Satrustegik (1978-1979: 240). Iñaki Caminok ohartarazi digunez, oraindik ere Aezkoako Orbara herrian bada *Fanix Iriartekoa* pertsonaia irri egiteko istorioetan. Nolanahi ere den, Jimeno Juriok (1997: 129) *Joanic* irakurtzen du; eta hari jarraituz Salaberrik (2012: 150) 'jadanik' interpretatzen du, honelaxe ulertzen du Salaberrik: «jadanik badituk [adarrak] eta [gero ere] izanen dituk». Zalantza gutxi dago, ordea, bukaeran *-x* dagoela.

Amaitzeko, lexiko aldetik *buffeta* agertzen da, *OEH*ren arabera (s.v. *bufeta*) Larramendi da lehena lekukotzen eta lapurterazkoa bide da. Lekukotasun honek zenbait mende aurreratzen du lehen agerraldia, eta hitzaren hedadura geografikoa zabaltzen du.

### *2.2.8.27. Ibargoiti*

Ibargoitiko Eloko bi lekukotasun ditugu jarraian, bata 1597koa eta bestea 1629koa: 1597koa Nafarroako Artxibo Nagusian dago; aldiz, 1629koa Iruñeko Elizbarrutiko artxiboko prozesu batean agertzen da. Azken hau Satrustegik (1978-79) eman zuen ezagutzera. Zaharrena, ordea, Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.4) aztertu zuen, eta aipatzen duen erreferentzia daukan agiria eskutan izan dugun arren, euskarazko lekukotasuna ez dugu aurkitu. Dena den, Sarasolak emandako 11398 erreferentzia duen agirian 1579koa dela jartzen du, ez 1597koa. Gainera, Sarasolak 427-428 orrialdeetan dagoela badio ere, guk begiratu dugun agirian ez dago 427tik gorako zenbakirik duenik.

#### *2.2.8.27.1. Testuak*

a) Elo, 1597; NAN.

> <…> *Biribilkatuco*[338] *çuela Guillen Garro.*
>
> <…> A la segunda pregunta dixo que puede haver treinta y cinco años poco más o menos que en presencia deste testigo Pedro de Sanchotena, defunto, vezino que fue de dicha villa siendo guarda del campo, precedente otras palabras, dixo al mismo quexante en su persona estas palabras: *Ago ixilic, ago ixilic, agota*.

b) Elo, 1629; IEA, C317, 12. zk.

> <1v> 7. Iten que estando rebistido muchas y diversas veces en días de labor[…] su missa y baxando a dar responsos e[339] las sepulturas, estándolos diciendo y responseando en bascuence, decía: «Ne recorderis *indan ene olloa*», con lo cual se escandaliçaron los zircunstantes.

---

338 Biribilkatuco] Sarasolak hala badakar ere, eskuizkribuan arraroa da <k> egotea.

339 e] ulertzen ez dugun ikur bat dago.

### *2.2.8.27.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, asimilaziozko sabaikaritzea dugu *olloa* (1629) adibidean eta, agian, *ixilic* (1597) adibidean. Morfologian, *indan* 'emaidan' (1629) agertzen da, *-i(n)-* aditzaren forma trinkoa. Azkenik, sintaxian, konpletibozko perpausetan *-ela* agertzen da: *biribilkatuco çuela* (1597).

### *2.2.8.28. Orbaibar*

Orbaibar eskualdeari dagokionez, XVI eta XVII. mendeetako zenbait lekukotasun ditugu: Orisoaingoa (1536), Etxaguekoa (1572), Barasoaingoa (1593), Santsoaingoa (1594), Puiukoa (1596), Lepuzaingoa (1653) eta Untzuekoa (1691). Lekukotasun guztiak daude Nafarroako Artxibo Nagusian eta Maiorak (2011: 29, 72, 93, 94, 95, 144) eman zituen ezagutzera. Nolanahi ere, Puiukoa Urrizolak (2007b) argitaratua zuen lehenago, testuaren transkripzio eta faksimilearekin. Besteak beste Puiuko lekukotasun hori kontuan harturik, herri horretan euskarak izan duen presentziaz idatzi du Lekarozek (2013).

Iruñeko Artxibo Nagusian lekukotasun gehienen jatorrizkoak ikusi ditugu. Dena den, Orisoaingoa ez dugu aurkitu, esaldia jasotzen duen agiriaren erreferentzia zuzena dela dirudien arren. Bestalde, Lepuzaingo 1653ko esaldia ez dugu aurkitu, baina, agidanean, erreferentzia gaizki dago. Maiorak (2011: 144) 04865 erreferentziadun agirian dagoela dioen arren, agiri horrek 1699ko data du, ez 1653 edo ingurukoa, eta esaldia ez dugu aurkitu.

### *2.2.8.28.1. Testuak*

a) Orisoain, 1536; NAN 95239.

> <…> […] que la dicha María Remíriz le dixo en bascuence que no dixiese las palabras que allá le dixo por estas palabras: *Ez ori herran*.

b) Etxague, 1572; NAN 97908.

> <54v> Y el dicho abad le respondió en bascuence que ya iría. Y el dicho Joan de Lana le respondió estas palabras: *Çoaz, fray çiquin*.

c) Barasoain, 1593; NAN 29154.

> <84v> […] que el dicho Joanes de Aldunate dio al dicho Joanes de Olcoz con las manos un bulco en la misma presa y que le dixo semejantes palabras: *Esterju çarra, goaye orrat*. Y el dicho Olcoz començó a dezir que fuesen testigos de lo que passaba. Y el dicho acusado bolbió a dezirle las mismas palabras. Y abiendo dicho la muger del dicho quexante, que allí estaba a esta sazón: «Y a mi marido le tratáis de esperjuro». Y el susodicho Joanes de Aldunate le respondió y dixo: «No he dicho yo tal, *miluçe çarra, bayce estterju çarra*», las cuales dichas palabras esta testigo no sabe qué quieren dezir.

d) Santsoain, 1594; NAN 99454.

> <64v> […] y, estando con ella, bio que la dicha Joana dixo muchas vezes estas o semejantes palabras: *Jesus*, *otoy, otoy*, como quien encarece una cosa.

<106r> Y estando en esto se alló presente Catalina de Idoi, ya defunta, nombrada en la pregunta, la cual le dixo al dicho Guillén, francés: *Jesus, Guillen, sein descolorituric eldu çaren!* […] Y luego en el instante llegó una hija de la dicha Joana de Osés, llamada Graciana de Osés, donde estaba el dicho acusado, esta que depone y los demás sobredichos con unas piedras en el debantal deziendo *Ay, traydorea!* al dicho Guillén y llorando. Y a esta que depone y los sobredichos les dixo le hiziesen lugar y le dexasen a tirar de pedradas al dicho acusado, deziendo: *Ay, traidorea! ama*[340] *ilic datorquet*.

e) Puiu, 1596; NAN 212985.

<6r> […] oyó y comprendió este testigo que el dicho Juanes de Esparça, herido, le dezía al dicho Martín de Alçorriz en bascuence desta manera: *heure bician estuc trataçen falçuquerietan bayce*, que quiere dezir: «En vuestra vida no tratáis sino en falsedades».

f) Lepuzain, 1653; NAN 4865.

<…> Y en muchas ocasiones les decían a los hijos de el dicho Alçorriz estas palabras: *Villau*[341] *dirus*[342] *ayta onen semetuaq*, que a nos sentir quiere decir «Villanos hechos idalgos[343] por dineros».

### *2.2.8.28.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, batetik <h> espletiboaren adibide bat daukagu: *herran* (Orisoain, 1536). Bestetik, beste adibide batean hitz amaieran <q> agertzen da: *semetuaq* (Lepuzain, 1653).

Fonologiari dagokionez, *oa-* > *goa-* gertatzen da, *goaye* 'hoa' adibideak erakusten duenez. Bestalde, ez dago hasperenik eta soildurik daude hots horren galerak eragindako bokal bikoitzak: *çarra*, *mi* 'mihi' (1593). Txistukarietan neutralizazioa bide dago herskari aurretik: *estuc* (1596). Inoiz, hitz hasieran ere neutralizatzen da: *sein* (1594). Edonola ere, bi kasuak grafia kontuagatik izan daiteke.

Morfologiaz den bezainbatez, azpimarratzekoa da adlatiboan *-(r)at* agertzen dela birritan: *orrat* (1593). Instrumentalean apikaria dugu: *dirus* (1653). Aditz morfologiara pasatuz gero, *joan* aditzaren aginterazko *çoaz* (1572) forma trinko orokorraz gain, *goaye* (1593) 'hoa' aldaera nafarra ere badugu. Halaber, *etorri* aditzaren geroaldi trinkoa lekukotzen da: *datorquet* (1594). Puiuko 1596ko adibidean *estuc* agertzen da; eta, bistan denez, **edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da: *estuc* (1596). Bestalde, Santsoaingo 1594ko *eldu çaren* puntukaritzat ulertu daiteke, 'zatozen' alegia.

Sintaxian aipa daiteke emendiozko perpausak sortzeko *bayce* ageri dela: *mi luçe çarra, bayce estterju çarra* (1593), *estuc trataçen falçuquerietan bayce* (1596). Puiuko adibide berberak Linschmann-Aresti legea betetzen du: *heure vician estuc trataçen falçuquerietan bayce*.

---

340 ama] esk. *ama* : M *amary*. Dena den, badirudi ondoko hitzeko <j> beste hizki baten gainean gainjartzen dela.

341 villau] Mk *villan* dakar; guk ezin izan dugu jatorrizkoa ikusi.

342 dirus] Ondotik, tatxaturik, *libradua* dator Mk dakarrenez.

343 idalgos] Mk *ygalgos* dakar.

Lexiko aldetik, azpimarratzekoa da *estterju* (1593) hitza. Badirudi erromantzezko testuan dagoen *esperjuro*-rekin lot daitekeela: «a mi marido de tratais de esperjuro» agertzen da gaztelaniazkoan. Dirudienez, *esperjuro* hitza aragoieraz erabiltzen da pertsona gaizto, endemoniatu eta itxura txarrekoari deitzeko (Lofigueras 2011). Agiri honetan lehenago lekukotzen den *espergo* erlazionatua bide dago arestikoekin eta, bertan esaten denez, 'Quiere decir corto de vista' da adiera. Dena dela, aipagarri da lekukoak hitzaren esanahia zein den ez jakitea: «Joanes de Aldunate le respondió y le dixo 'no he dicho yo tal *mi luçe çarra, bayce estterju çarra*', las cuales dichas palabras esta testigo no sabe que quieren dezir». Amaitzeko, *ayta onen semetuaq* (1653) hitz elkartua agertzen da. *OEH*ren arabera, *aitorensemetu* aditza Duvoisinen hiztegian baino ez da agertzen.

### *2.2.8.29. Artaxoa*

Kokapen ezaguna duten azken lekukotasunak Artaxoakoak dira. Guztira lau esaldi dira: 1561ekoa, 1573koa, 1607koa eta 1742koa. Azken hori izan ezik, Artaxoako agiritegiko lekukotasuna baita, gainerako guztiak Nafarroako Artxibo Nagusiko agirietatik atereak dira. Denak eman zituen ezagutzera Maiorak (2011: 51, 74, 118 eta 163). Dena dela, berrikiago, Santaziliak (2015) Artaxoako 1607ko lekukotasunaren irakurketa berria eta azterketa plazaratu ditu, beste zenbait lekukotasunekin batera.

Lekukotasun guztiak ikusi nahi izan ditugun arren, batzuk ezin izan ditugu ikusi. Artaxoako 1573koaren erreferentziak zuzena dirudien arren, ez dugu agirian esaldia aurkitu. Azkenik, Artaxoako Udal Artxiboan dagoen 1742ko lekukotasuna ez dugu ikusi.

#### *2.2.8.29.1. Testuak*

a) Artaxoa, 1561; NAN 10421.

> <45r> Se acuerda oyó y comprehendió este testigo que el dicho Vítor de Alegría, quexante, dixo: «Mal grado aya porque fui a berlo», deziendo en bascuence: *Esquerrgayz duela escasac*. Pero no sabe por qué fin, ni por qué causa, ni razón dixo las dichas palabras.

b) Artaxoa, 1573; NAN 98161.

> <...> Le pareció bio este testigo que en lengoa bascongada dixo a un moço que estaba escocando y rancando çarças de una pieça con su açada: *Çatoz, Martin*, que bueltas en romance quieren dezir «Beni, Martín».

c) Artaxoa, 1607; NAN 2163.

> <31v> Y el dicho Miguel Colomo, disculpante, le abló en bascuence a la dicha criada, y le dixo desta manera: *Estesaçula bana*[344] *alonbra ori, eçe urtea beteric dagola. Çoas, çaynço*[345] *çure nagusiari nic erran drayçudala*.[346]

---

344 bana] aurretik letra bat tatxaturik dago.
345 çaynço] esk. *caynço*.
346 drayçudala] <y> eta <ç> artean <d> tatxaturik.

d) Artaxoa, 1742; AUA C59.

<…> Y le diré me coja algunas brevas y la que declara le dijo: *Or compon*.

*2.2.8.29.2. Iruzkina*

Fonologiari dagokionez, *au* > *ai* gertatu da: *drayçudala* (1607). Txistukari igurzkarietan, herskari aurretik eta hitz bukaeran, apikariaren aldeko neutralizazioa dagoela dirudi; ez, ordea, bokal artean edo hitz hasieran: *eçe*, *çoas* (1607). Dena den, *estesaçula* ( 1607) dago, beharbada *z-z* > *s-z* disimilazioarekin.

Aditz morfologiari dagokionez, jusibozko eta aginterazko trinkoak agertzen dira: *duela* (1561) eta *çatoz* (1573). Aditz bezala hartuz gero, trinkoa litzateke *çaynço* (1607), baina interpretazioa ez da ziurra (ik. beherago). NOR-NORI-NORK sailean **eradun* dago: *erran drayçudala* (1607). Indikatiboaz landakoetan aditzoina mantentzen da: *estesaçula bana* (1607) eta, fosildurik egon arren, *or compon* (1742).

Lexikoaz den bezainbatez, *erran* (1607) erabiltzen da. Bestalde, *alonbra* (1607) lekukotzen da; orain artean Landuccirena zen *alhonbra*-ren lekukotza bakarra.

Zalantzazkoen artean dago *çaynço* (1607) adibidea. Santaziliak (2015: 136) aditz gisa hartzen du eta, proposatzen duenez, *-i(n)-* erroa da eta 'eman, berria eman' zentzua luke. Halere, gogora dezagun jatorrizkoak *caynço* jartzen duela.

*2.2.8.30. Uxue*

Uxueko bi lekukotasun bi dugu; biak XVI. mendearen akabukoak eta biak laburrak bezain interesgarriak. Ez bakarrik hizkuntza ezaugarriei dagokienez, baita euskararen hegoaldeko hedadurari dagokionez ere. Berriki agertu diren 1581eko eta 1598ko esaldi hauek dira Nafarroan agertzen diren lekukotasun hegoaldekoenak, toponimia bazter utzita jakina; eta erakusten dute Uxuen XVI. mende bukaeran gaztelaniaz gain euskara ere bizirik zela.

Monteanok (2017: 178) eman du lehenengoz ezagutzera 1581ekoa, baina grafia eguneratuarekin eta hizkuntza azterketarik gabe, ez baitzen hori historialariaren helburua; ik. orain Santaziliak (2019).[347] Bigarrena, lehenengoz Santaziliak (2019) dakarkigu.

*2.2.8.30.1. Testua*

a) Uxue, 1581, NAN 56284

<85r> Y el dicho Arbeloa dixo y respondió que no tenía ninguna culpa. Y bista su negatiba con las protestaçiones arriba dichas, le mandaron apretar los <85v> cordeles con los garrotes y assí se los apretó el dicho executor. Y estando assí apretado con los cordeles, dezía en bascuençe el dicho Arbeloa: «*Estugu alacoric eguin*», que quiere decir 'no hemos hecho tal cosa'. Y de nuevo le mandaron que diga la verdad, donde no le mandarían apretar segunda vez. Y siempre insistió en su negatiba. Y se los apretó segunda vez. Y haviéndole amonestado otra vez, siempre dezía 'no hemos hecho tal cossa'.

347 Monteanori berari eskertu behar diot euskarazko pasartea duen zatia bidali izana.

b) Uxue, 1598, NAN 309509.

> <52r> Y el ombre que estaba con la lança comprendió que dixo en bascuençe: «*arcabuzaldi bat*» y no comprendió que declarase más, más de que el que tenía el arcabuz, dixo: «*Arcabuzas es, estiot arcabuzau emanen. Estate gure probechu, arcabuzetara etorri bagaytes*», que bueltos en romançe quieren dezir: «con el arcabuz no, el arcabuz no le daré, que no sera nuestro probecho, si benimos a los arcabuces.

### *2.2.8.30.2. Iruzkina*

Lekukotasun laburrak izan arren, bada zer iruzkindu. Fonologia aldetik, bateko, *estugu* (1581), *estiot* eta *estate* (1598) adizkietan <s> agertzen da, beharbada herskari aurreko neutralizazioaren ondorioz, baina kontu grafikoa izan daiteke. Orobat, neutralizazioa bide dugu instrumentalean, *arbabuzas* (1598), eta gainerako hitz bukaeretan: *es* (1598) eta *bagaytes* (1598). Besteko, *alacoric* adibidean ikus daitekeenez, ez da hasperenik agertzen. Aditz morfologiari begiratzen badiogu, geroaldiko bi forma ediren ditugu; batean, forma perifrastikoa dugu, ekialde zabaleko *-en* bukaerarekin: *emanen* (1598); bestean, ordea, forma zaharra dugu, trinkoa *-te* markarekin: *estate* (1598). Bestalde, *estugu* berriro hartuta, **edun* aditzaren erroa *-u-* da Nafarroa gehienean eta ekialde osoan ohi bezala. Amaitzeko, sintaxian baldintzaren egitura zaharra ikus dezakegu: *etorri bagaitez* (1598). Ohart gaitezen, aditzoina beharrean, partizipioa dagoela.

### *2.2.8.31. Kokapen geografiko ezagunik gabekoak*

Azken atal honetan, geografikoki zehatz kokatu ezin izan ditugun esaldiak dakartzagu. Hiru dira guztira.

### *2.2.8.31.1. 1415eko esaldia*

Ondoko esaldi hau 1415ekoa da, eta Nafarroako Artxibo Nagusian dagoen agiri batean agertzen da orrialde zuri batean. Lehenengoz Fagoagak (1961) eman zuen ezagutzera esaldia, eta beranduxeago Mitxelenak (*TAV* § 2.2.16) berrargitaratu zuen, Fagoagaren edizioan oinarrituta. Dirudienez, ez da zuzena Fagoagak emandako erreferentzia: paper solteak, 2. seriea leg. 4, 115 zenb. Peio Monteanori esker jakin ahal izan dugunez, egun ondoko erreferentzia darama: «AGN-NEAN. Comptos. Papeles Sueltos, segunda serie, legajo 10, núm. 71, doc. 15».

Nafarroako Artxibo Nagusian dagoen jatorrizkoa ikusi dugu, eta horixe erabili dugu gure edizioa egiteko.

#### 2.2.8.31.1.1. Testua

> Pelegrinus dat gaudium *apeçari ez oroc axeguin*.

#### 2.2.8.31.1.2. Iruzkina

Esaldi laburra denez, iruzkintzeko ez da gai askorik. Dena den, grafia aldetik aipa liteke <x>-ren erabilera txistukari afrikatua islatzeko. Bestalde, *oroc* zenbatzaile zehaztugabea agertzen da. Lexikoaz den bezainbatez, *apeçari* aldaera nafarra agertzen da.

### *2.2.8.31.2. Orreagako artxiboko esaldiak*

Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.3, 5. oin-oharra) Ibarraren *Historia de Roncesvalles* (1936) liburuan agertzen den 1626ko euskarazko esaldi bat jasotzen du. Agidanean, Orreagako artxiboko auzi-agiri batean, Artzibarko Asnozko Joan Iribarrenen eta Orreagan bizi zen Maria Enekoitz aetzaren arteko ezkontza jasotzen da. Bikotea ezkondu behar zuen bikarioa gaixorik zegoela, bikotea, senideak eta lagunak bikarioaren gelara sartu ziren. Kokapen ezezaguneko testuen atalean jarri badugu ere, ezaguna da nongoak diren hiztunak, baina senar-emaztegaiak eskualde ezberdinekoak direnez eta hirugarren leku batean jaso zenez, hemen sartzea erabaki dugu.

Ez dakigu zein agiritan dagoen euskarazko esaldia. Ibarrak ez du esaldia jasotzen duen prozesuaren erreferentziarik ematen, eta Alzolak (1967: 435-436) esaldiaren transkripizioa ematen badu ere, Ibarraren irakurketan oinarritzen da. Hori dela eta, Sarasolaren edizioan oinarritu gara gurea egiteko. Bikarioaren lekukotza da agirian jasotzen dena.

#### 2.2.8.31.2.1. Testua

> Doce días hacía que una fiebre maligna le tenía postrado en cama al Vicario, y el señor Berna [tío de los novios] amigo íntimo suyo, fue a visitarle e interesarse por su salud, acompañado de los novios, a los que previamente les había instruido de cuándo debían entrar en el aposento del enfermo y de las palabras que habían de pronunciar como fórmula sacramental, para el matrimonio que por ellas debían contraer en presencia del legítimo sacerdote delegado para esta función por el Vicario General del Obispado y del Prior de Roncesvalles. Presentóse el taimado cuanto apasionado tío señor Berria, ante la cama del enfermo Vicario, y después de saludarle y preguntarle por su salud, y contestarle el Vicario sobre la evolución de su enfermedad, hizo Berria una seña a sus sobrinos y a los testigos para que se presentasen ante el Vicario y pronunciasen las palabras sacramentales. Todo salió a pedir de boca, pero a costa de un fenomenal disgusto y agravación de la enfermedad del Vicario. *Nay nauzu zure senarretaco*?, preguntóle el novio a la novia, luego se puso delante un mozo, con una capa blanca, y en seguida una moza, que le contestó *Bay, naycen dizut*,[348] e igualmente repitióle la novia al novio la misma pregunta, y contestada afirmativamente por el novio, huyeron inmediatamente de la casa del Vicario, todos, tío, novios y testigos, dejándole al pobre Vicario, desconsolado y cubierta hasta su cabeza con las sábanas de su lecho».

#### 2.2.8.31.2.2. Iruzkina

Lekukotasun laburra izan arren, interesgarria da senarraren ahotik jasotako *senarretaco*: prolatiboan *-tako* duen lehendabiziko adibidea da. Gogora dezagun mende bete lehenagokoak diren ezkontza fedeetan *-zat* agertzen dela. Bestalde, *nay* eta *naycen* ditugu. Beharbada, txandaketa horrek Artzibar eta Aezkoaren arteko desberdintasun dialektala erakusten du; hain zuzen ere, senarrak *nay* erabiltzen du, baina

[348] dizut] Sarasolak *dizuz* dakar; itxura denez, transkribatzean egindako hutsa da.

Orreagan bizi den emazte aetzak *naycen*. Ohart gaitezen, gainera, darabiltzaten aditz laguntzaileak desberdinak direla: senarrak **edun* darabil, emazteak *-i(n)-*.

#### *2.2.8.31.4. Luis Delcarteren lekukotza*

Azpiatal honetako lekukotasun hau ere orri solte batean agertzen da, 1664ko agiri baten barruan. Dakigula, Maiorak (2011) jaso zuen lehendabizikoz Nafarroako Artxibo Nagusiko 15.964 prozesuan agertzen den orri solte batetik. Ez dakigu zehazki zer den: lerroen banaketa nola egiten den, kopla elebiduna izan daiteke; errima dute lehen bi lerroek eta azken biek. Orrialdeak sinadura bat dakar: Juan Francisco.

##### 2.2.8.31.4.1. Testua

Luys Delcarte noble persona,
edan diroque ardo ona.
Itten mandamos
todos los que aquí estamos

##### 2.2.8.31.4.2. Iruzkina

Iruzkintzeko askorik ez badago ere, azpimarratzekoa da **iron* laguntzaile zaharra agertzea: *diroque*, ahalerazko *-ke* duela.

### 2.2.9. Juan Irañetak Pedro Iterori igorri gutuneko esaldia

Ondoko lekukotasun hau 1549ko urtarrilaren 8an Juan Irañetak Pedro Itero Saldiasko apaizari Erromatik idatzitako gutunean agertzen da. Irañeta nafarra Erroman bizi zen eta Santa Angeloko gotzainaren morroia izan zen (Fagoaga 1961: 29).

Fagoagak (1961) eman zuen lehenengoz esaldia ezagutzera. Ez zuen, haatik, gutun osoa eman; beraz, ezin dugu esaldia bere testuinguruan jarri, eta ez dakigu gutuna zein hizkuntzatan idatzi zen. Fagoagari esker dakiguna da gutunaren azken agurra euskaraz idatzi zuela Irañetak. Mitxelenak (*TAV* § 2.2.16) esaldia berrargitaratu zuen.

Fagoagak esan zuenez, gutuna Nafarroako Artxibo Nagusian dago, baina ez zuen erreferentzia osorik eman; Barbo idazkariaren agirietako batean dagoela, ez besterik. Hori dela eta, ez dugu jatorrizkoa ikusteko aukerarik izan eta Fagoagaren bertsioan oinarritu gara. Peio Monteano Iruñeko Artxibo Nagusiko goi-teknikariarekin harremanetan egon gara ea lekukotasunaren berririk aurkitzen dugun, baina ez dugu ezer idoro.

#### *2.2.9.1. Testua*

Eta Jaincoac parca derozola Migueli, çerren ni emen nayzala eçuen scribatu bear berçeri.

#### *2.2.9.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, idazkera kultua agertzen da *scribatu* maileguan. Fonologiari dagokionez, herskari ahoskabea dago *parca* aditzoinean; 1745 aurretik Zannettiren kre-

doan eta esaldi honetan bakarrik dugu aldaera ahoskabea. Bestalde, ez dago hasperenik: *emen*, *bear*.

Izen morfologiari dagokionez, Pagolak (1995: 284) *berçeri* adibidean datibo pluraleko *-eri* dagoela iradoki arren, mugagabea da; alegia, 'besteei' beharrean, 'besteri, beste inori' ulertu behar delakoan gaude. Beraz, datibo mugagabeko marka *-ri* da.

Bestalde, aditzaz den bezainbatean, hegoaldeko goi-nafarreraren ezaugarri nagusietakoa den **erazan* laguntzailea dago. Hauxe da aditz horren lehenengo agerraldia: *parca derozola*. Adibide horretan ikus dezakegunez, bestalde, aditzoina erabiltzen da indikatibokoak ez diren perifrasietan. Amaitzeko, datibo komunztadurarik ez da *eçuen scribatu bear berçeri* esaldian.

Sintaxian, kausazko perpausak sortzeko *çerren* erabiltzen da, eta konpletiboetan *-ala* agertzen da: *nayzala*.

Esaldian aipatzen den Miguel hori Miguel Itero Tolosako eta Huescako Unibertsitateetako Zuzenbideko irakaslea bide da; Trentoko Kontzilioaren izenean Iruñeko gotzainaren aholkulari ere izan zen (Fagoaga 1961: 29).

### 2.2.10. Henrike Borboikoaren jaiotza dela eta egindako bertsoa

Jarraian dakargun bertso hau 1553ko abenduan edo 1554ko hastapenetan idatzi zen Joana Albretekoaren eta Antonio Borboikoaren seme Henrike Borboikoaren jaiotza zela eta. Hain zuzen ere, Nafarroako Henrike III. eta Frantziako IV.a 1553ko abenduaren 13an jaio zen, eta horren karietara *Poesie en diverses langues sur la naissance de Henry de Bourbon Prince tres hevreus, ne au chasteau de Pau au mois de decembre. 1553* liburua argitaratu zen Okzitaniako Tolosan, Jacques Colomiés inprimatzailearenean.

Liburuaren izenburuak iradokitzen duen bezala, aipatu erregearen omenez hainbat hizkuntzatan idatzitako bertso eta olerkiak agertzen dira. Courouauk (2004: 627) hala laburbiltzen du:

> Expresada en términos estadísticos, la repartición de los 59 poemas que componen la colección según las diferentes lenguas se establece así:
>
> | | | |
> |---|---|---|
> | francés 25 (42,3%) | griego 5 (8,4%) | italiano 4 (6,8%) |
> | latín 15 (25,4%) | occitano 5 (8,4%) | |
>
> Las otras lenguas son representadas con un único poema (o sea 1,7% por cada una de las lenguas restantes). Se trata del castellano, del alemán y de idiomas usados dentro del reino de Francia, como el dialecto de Poitou (*poitevin*) o el idioma francoprovenzal del Delfinado. Dos lenguas no románicas figuran en la lista: el bretón y el vasco, cuyo primer testimonio literario conocido hoy día al norte de los Pirineos se lee aquí.

Ikusten denez, liburuan agertzen diren hizkuntzetarik bat da euskara, baina ez dakigu nor izan zen euskarazko koplaren egilea. Lantzen den gaia nabarmena da: Evreux leinuko Henrike Borboikoaren jaiotza goresten da.

Olerki hau lehendabizikoz Haritschelharrek (1983) eman zuen ezagutzera, Londresko British Museumen dagoen *unicum*-eko euskarazko bertsoaren faksimilearekin batera. Hain zuzen ere, horretan oinarritu gara gure edizioa egiteko.

Bertsogintzari dagokionez, Haritschelharrek (1983: 265) ohartarazten du 15 silabako bertso-lerroak dituen ohiko egitura dela eta Etxeparek ere erabili zuela. Bi hemistikiotan bana daiteke bertso-lerro bakoitza, 8 + 7 alegia.

Ez dugu Londresen dagoen jatorrizkoa ikusterik izan eta, beraz, Haritschelharrek (1983) emandako faksimilea baliatu dugu.

### *2.2.10.1. Testua*

En basque
Gure principe Don Henrrique iaunari

Mundu gucia huna vetor aur noble onengana[349]
oin-escuen apazcera, iaun andiari beçala.
Ez iaio da, ez iaioco, ior onen igoala
hanvat vada seynale andi ceruan dacusaguna.
Lengoaíe[350] oroc vadiote varon handia çarala,
níc diosçut ciratela iaun gucien iáuna.

### *2.2.10.2. Iruzkina*

Grafiaren erabilerari dagokionez, zenbait kontu aipatzea merezi du. Batetik, *o* > *u* egiten da sudurkari aurretik *huna* adibidean. Bestalde, txistukari afrikatuak adierazteko <zc> eta <sç> digrafoak erabiltzen dira: *apazcera*, *diosçut*. Frikaria, ordea, <c> grafemak islatzen du *e*, *i* eta *y* aurretik: *ceruan*, *ciratela*, *gucien*. Aldiz, <ç> erabiltzen da gainerako bokalekin: *beçala*, *çarala*. Horrezaz gain, dirudienez, <yn> dago sudurkari sabaikaria islatzeko: *seynale*. Behin bada ere, herskari belar ahostunerako <gu> dator <o> aurretik, baina <g> ere badago: *Lenguoaíe*, baina *igoala*. Azkenik, <h> grafema agertzen da, *hona*, *hanvat*, *handia*; baina ez dirudi hasperena islatzeko denik, esperoko genukeen beste leku batzuetan ez baita grafema hau ageri: *aur*, *onengana*, *ior*, *onen*.

Hasperen ezaz gain, fonologia aldetik bokaletan *hanvat* adibidean ikusten dugunez, *ai* > *a* egin da. Gainera, **j*-ren ahoskera hurbilkari [j] edo [ʝ] igurzkari sabaikariarena bide da: *iauna*, *iaun*, *iaioco* eta baita mailegu den *lenguoaíe* hitzean ere. Fonologiarekin amaitzeko, goi-nafarreraz ohi denez, maileguetan *-on* mantendu da: *varon*.

Morfologiari dagokionez, izenordainetan *ior* eta *oroc* agertzen dira. Lekukotasunek erakusten dutenez, *ior* izenordaina Nafarroako ekialdeko, erdiguneko eta hegoaldeko mintzoetan erabiltzen da, ez Nafarroako iparraldean. Aditzei dagokienez, trinkoak maiz agertzen dira: indikatiboan *dacusaguna*, *vadiote*, *diosçut*; jusiboan *vetor* eta geroaldian *ciratela* 'izango zarela' (cf. *guertu date*, Sueskunen zortzidunean). *Izan* aditzaren 2. pertsonako forman *-a-* eta *-i-* ditugu: *çarala* eta *ciratela*.

Sintaxian, TO-GEN egitura agertzen da: *oin-escuen apazcera*. Sintaxian, TO-GEN egitura agertzen da: *oin-escuen apazcera*. Horrezaz gain, ezezko perpausean *Ez iaio da, ez*

---

[349] Lerroa nahiko ilun ikusten da, baina ongi irakur liteke.

[350] Lengoaíe] jat. *Lenguoaíe*.

*iaioco* agertzen da, gaztelaniazko *ni ... ni* egituraren pareko. Haritschelharrek (1983: 264) estiloari egozten dio, baina testuetan ohikoa da; Beriainek ere badu halakorik (§ 3.3.1.6). Halaber, aipagarri da erlatibozkoaren kokapena, izen sintagmaren barruan agertzen baita *seynale andi [ceruan dacusagun]a* adibidean.

Amaitzeko, lexiko aldetik *apatu* aditza agertzen da *apazcera* moduan, eta *lengoaíe* forma ageri da.

### 2.2.11. Eraulgo ezkontza gonbidapena

Hurrengo testua ezkontza gonbidapena da, eta ezagutzen den goi-nafarrerazko gisa honetako testu bakarra. Dirudienez, Eraulen izan zen ezkontza 1564an, eta testuaren egileak, hots, gonbidatzaileak, lehentasunen arabera zerrendatu zituen gonbidatuak. Testua bera zirriborroa bide da, eta tatxaturik dago. Horrek, bistan denez, irakurketa zailtzen du (Satrustegi 1991a: 287-288).

Satrustegik (1991a) eman zuen ezagutzera eta, dakigula, ez du inork gehiago aztertu testu hau. Egun esku pribatuetan dago Eraulgo ezkontza gonbidapena daraman 6 folioko agiria, eta ondoko izenburua darama: «Carta de compra de Miguel San Jn. vez.º de Eraul de la casa y bienes q. compro de Echabarry. 1564». Badarik, gonbidapenak ez du zer ikustekorik agirian lantzen den gaiarekin.

Ez dugu jatorrizkoa ikusteko aukerarik izan, eta Satrustegik (aparatu kritikoan S) esan eta emandakoan oinarritu gara gure edizioa paratzeko.

#### *2.2.11.1. Testua*

> Señora Maria de Urvizaldea ezconcen zagu. Ezteietara, mersede eguiguzu, etorri[351] zerau lenbizicoa, Micolau bigarrena,[352] J. Fransisca andrea iru, Babola laugarrena[353] Mariayna[354] alabaz aldeco.[355]

#### *2.2.11.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, *ai > a* gertatu da eta, ondorioz, *zagu* ‘zaigu’ daukagu. Kontsonante multzoen artean *-rs-* dugu *mersede* adibidean.

Izen morfologian, *zerau* izenordain indartua dugu.

Interpretatzeko zailtasunak ditugu testuaren amaieran. *Mariayna*, Satrustegik (1991a: 288) iradoki bezala, ‘Mariana’ izan liteke; formagatik, ‘Mariarena’ izan liteke, baina kronologia aldetik kasu bakarra litzateke, ez baita halakorik XVIII. mende erdialdera arte. Iluna da, halaber, testuaren akabuan dagoen *alabaz aldeco*. Satrustegik (1991a: 288) ‘al lado de la hija’ itzultzen du. Dena den, testu zaharren artean *aldeco*-k ‘aldameneko’ adiera duen kasu bakarra da. «Alabaren aldetik» ere izan daiteke;

351 etorri] S *etori*.
352 bigarrena] S *bigarena*.
353 laugarrena] S *laugarerena*.
354 Mariayna] Satrustegik dioenez, irakurketa zaila omen da beltzune bat duelako.
355 alabaz aldeco] S *alabazaldeco*.

ezteietara alabaren aldetik datozenak alegia; ohart gaitezen, Beriainek *bearraçaldecoac* 'belarriaz aldekoa, belarrondokoa' darabil.

### 2.2.12. Amenduxen olerkia

Joan Amenduxek 1567an idatzitako olerkia da orain dakarguna. Bertsoa Amenduxen aitaren agirien artean dago, eta gaur egun Nafarroako Artxibategi Nagusian dago jasorik, erreferentzia honekin: *Códices varios*, L.4, 26r orrialdea.

Satrustegik (1963) argazki eta transkripzioarekin lehen aldiz ezagutzera eman zuenetik asko hitz egin da olerki honi buruz. Testua argitaratu eta urte berean Irigaraik (1963a eta 1963b) interpretatzeko zenbait ohar egin zituen. Mitxelenak ere (*TAV* § 3.1.18) argitaratu zuen, Irigaraik Satrustegiren irakurketari egindako zuzenketak onarturik eta hizkuntzaren azterketa eginik. Hamarkada bat geroago, Satrustegik berak (1975), aurrekoen iruzkinak kontuan harturik, testua berrargitaratu eta irakurketa ohar batzuk egin zituen. Beste lan batean, Satrustegik (1985) Amenduxen testua aitzakiatzat hartu zuen XVI. mendeko medikuntzaz zenbait ohar egiteko. 1987an argia ikusi zuen *Euskal testu zaharrak I* bilduman ere gehitu zuen Satrustegik testua, bere faksimilearekin. Horren ondotik, Salaberrik (1996) testuaren edizio paleografikoa prestatu, eta hizkuntzaren azterketa egin zuen; gainera, ohar paleografiko oso zehatzak gehitu zituen. Caminok (2003b) hegoaldeko goi-nafarrerazko corpusaren lagintzat ematen du, beste testuen artean, Amenduxen bertsoa. Azkenik, Sainz Pezonagak (2006) Amenduxen testuaren azterketa filologiko sakona osatu zuen. Bertan, aurreko ediziogileen irakurketak emateaz gain, berea eman zuen, eta lerroz lerro justifikatu zuen irakurketa.

Joan Amenduxen bizitza bikain aztertu zuen Jimeno Juríok (1996). Dirudienez, 1540. urte inguruan sortu zen, eta bere gurasoak Miguel Amendux, zirujaua, eta Mari Miguel Garro ziren. Ume zelarik, lehenik aita hil zitzaion eta hurrengo urtean ama. Ondorioz, Juan Oses osabak, berau ere zirujaua, hartu zuen Joanen ardura 1553-1562 bitartean, eta Valtierrara eraman zuen berarekin bizitzera. Bitarte horretan Zaragozara joan zen ofizioa ikastera, baina osasun kontuengatik osabarenera itzuli behar izan zuen. Gerora, Zaragozan, Sevillan eta Flandesen ibili zen. Azkenik, Iruñera itzuli zen bertan negozio bat irekitzeko asmoz, baina porrot eginik eta 400 dukateko zorra izanik 1567an Tafallako kartzelara sartu zuten zortzi hilabetez. Bertan idatzia bide da olerki hau.

Jimeno Juríok (1996: 104) erakusten duenez, Joanen gurasoen abizenak (Amendux eta Garro) kontuan izanik, bere familiaren jatorria Pirinioen iparraldean dago, Nafarroa Beherean, Donapaleu inguruan, aitarena, eta Lapurdin amarena. Izatez iruindarrak baziren ere, Lapurdiko eta Nafarroa Behereko senideekin harreman estua izan zuten (*ibid.*) eta, iruzkinean ikusiko dugunez, olerkian islatzen den hizkeran eragina izan zuela dirudi. Ideia horrek Sainz Pezonagarenarekin (cf. 2006: 61-62) bat egiten du, hark dioenez, Pirinioez iparraldetik jende ugari baitzen Nafarroako Erribera aldean eta, ondorioz, Joan Amenduxek ez zuen urrutikoa Pirinioez haratagokoen mintzoa.

Literatur balioari dagokionez, Sainz Pezonagak (2006: 83) herri poesiaren barruan sailkatzen du Etxeparerekin batera, eta metrikaz den bezainbatez honakoa dio:

> Herri metrikan bertsoa bi hemistikiotan banatzen da zesura batekin, eta hemistikio bakoitzean eten edo semizesura bat dago. Mitxelenaren eta Altunaren aburuz,

> 4/4//4/3 eskema da Etxeparerengan eta antzinako herri olerkigintzan duguna. Ezaguna denez, ideia hori eztabaidatua izan da azken urteetan, eta zenbait ikerlek, Jon Juaristi eta Ibon Sarasola haien artean, pentsatzen dute hamaseina silabakoak direla Etxepareren bertsoak. Ez naiz hemen eztabaida horretan sartuko, baina nik Amenduzeren olerkian 4/4//4/4 eskema sumatzen dut.

Eta aurrerago:

> Lehen begirada batean ikusten denez, bertso anisosilabikoak ditugu, hau da, irregulartasunak ageri dira. Ezaugarri hori Etxeparerengan, Etxeberri Ziburukoarengan eta herri autoreetan normala da, eta kantatua izateari loturik dago. Eskema bati jarraituz, irregulartasunak ahozko baliabideak erabiliz moteltzen dira. Gainera, ohikoa izaten da ahozko espresioa bat ez etortzea idazten denarekin. Adibidez, hirugarren bertsoan *Jangoycoagana* idazten dena *Jankwagana* esaten ahal da kantatzerakoan, lau silabatan ebakiz, eta eskemari jarraituz.

Azkenik, ondorioztatzen du bertsoa idatziz jarri aurretik kantatua izan zela (Sainz Pezonaga 2006: 84).

Testuak dituen ezaugarriengatik eta zahartasunagatik, bi edizio prestatu ditugu: paleografikoa eta kritikoa. Horretarako, Nafarroako Artxibo Nagusian dagoen jatorrizkoa erabili dugu, baina ohar paleografikoetan aurreko editoreekiko desberdintasunak markatu ditugu: Sat, Satrustegiren 1987koa; M Mitxelena; Sal, Salaberri; Sai, Sainz Pezonaga.

### *2.2.12.1. Testua*

#### *2.2.12.1.1. Edizio paleografikoa*

Hemen naça orçiric noyzbait Gozo Erici
ric erioac hustegabe dolorosqui EgociRiq
Ene anima Jāgoycoagana belduRequi parti
turic
lagungabe bide lusean peril asco pasaturic
honac Eta horrac bertan muduac edequiric
plazerac azqueno asecabe biurturic
haydeac Eta adisquideac artes gutis acenduric
ycuste tut ysusiRic arrece gusia des Eguinic
argi gabe yllunbetan hustel Eta quirasturic
nigar begi bapederac bere aldias oRoyturic
niorcore isanen Estu ni estudan partiduric
Ene anima duçuen gomendatu garitates mobituric
çaRajzquidate g[...] bertan yçoc ongi notaturic
Josafate baturen gara judision Elca Requi
Bitartea lodagigun baquea dela gusiequi

### *2.2.12.1.2. Edizio kritikoa*

Hemen naça[356] orçiric, noyzbait gozo ericiric,
erioac[357] hustegabe[358] dolorosqui egociriq,
ene anima[359] Jangoycoagana beldurrequi[360] partituric,
lagun gabe bide lusean peril asco pasaturic,
honac eta honrrac[361] bertan munduac edequiric,[362]
plazerac azqueno[363] asecabe biurturic.
Haydeac eta adisquideac arte[364] gutis acenduric
icusten tut,[365] isusiric,[366] arrece[367] gusia deseguinic,
argi gabe, illunbetan,[368] hustel eta quirasturic.
Nigar begi bapederac bere aldias oroyturic.
Niorc ere[369] isanen estu nic estudan partiduric.
Ene[370] anima[371] duçuen gomendatu, garitates mobituric;
çarraizquidate g[...],[372] bertan içoc ongi notaturic.
Josafaten baturen gara judision[373] elcarrequi.
Bitartean[374] lo dagigun, baquea dela gusiequi.[375]

---

[356] naça] <n> gainetik beste tinta batez marka batzuk daude.

[357] erioac] <e> erdi ezabaturik dago, baina ikusten da.

[358] hustegabe] <h> tinta ilunagoz dago, beste hizki baten gainetik, dirudienez <v> baten gainetik.

[359] anima] esk. *anima* : I *arima* : Sat *anima* : M *arima* : Sal *anima* : Sai *anima*. Mitxelenak <r>-ren alde egiten du «argumentu linguistikoengatik».

[360] beldurrequi] esk. *belDuRequi* : I *Beldurriqui* : Sat *beldurriqui* : M *beldurrequi* : Sal *belDuRiqui* : Sai *belDuRequi*. Bigarren <e>-ren gainean puntu bat dago eta horrek eragin du nahastea irakurketan.

[361] honrrac] esk. *horrac*. Euskalarien artean eztabaida egon da hitz honen interpretazioan (ik. Salaberri 1996: 91).

[362] edequiric] esk. *edequiric* : I *edequiric* : Sat *edequiric* : M *edequiric* : Sal *ydequiric* : Sai *edequiric*.

[363] azqueno] esk. *azqueno* : I *azquenic* : Sat *azqueno* : M *azque[…]* : Sal *azqueno* : Sai *azqueno*.

[364] arte] esk. *artes* : I *artes* : Sat *urtes* : M *vrte* : Sal *artes* : Sai *artes*. Eskuizkribuan bukaeran *-s* badago ere, hutsa dirudi; ik. iruzkineko oharra.

[365] icusten tut] esk. *ycuste tut* : I *ycusten tut* : Sat *ycuste tut* : M *ycuste tut* : Sal *Ycuste(n)tul* : Sai *ycuste tut*.

[366] isusiric] esk. *ysusiRic* : I *ysuriric* : Sat *ysuriric* : M *ysuriric* : Sal *ysuriric* : Sai *ysusiRic*.

[367] arrece] esk. *arrece* : I *arresi* : Sat *arrece(re)* : M *arreci* : Sal *arrece* : Sai *arrece*.

[368] yllunbetan] esk. *yllunbetan* : I *yllunbetan* : Sat *yllunbitan* : M *yllunbetan* : Sal *yllunbitan* : Sai *yllumbetan*. Eskuizkribuan, <e>-ren gainean puntutxo bat dago eta horrek eragin du nahastea.

[369] niorc ere] esk. *niorcore* : I *niorc ere* : Sat *niorc ere* : M *niorc ere* : Sal *niorcore* : Sai *neorcore*/*niorcore*.

[370] ene] Nahiko lauso dago.

[371] anima] esk. *anima* : I *arima* : Sat *anima* : M *arima* : Sal *anima* : Sai *anima*. Mitxelenak <r>-ren alde egiten du «argumentu linguistikoengatik».

[372] g[...]] I *gucis* : Sat *guioco :* M *guci* : Sal *g-.* : Sai *guero*. Ez da ondo ulertzen eta hainbat irakurketa eta proposamen izan dira, ik. Satrustegi (1975: 78). Sainz Pezonagak (2006) proposatzen duen *guero* irakurketak dirudi hurbilen dagoela.

[373] judision] esk. *judision* : I *judision* : Sat *judicion* : M *judision* : Sal *judision* : Sai *Judision*.

[374] bitartean] esk. *bitartea.* : I *Bitarteo* : Sat *bitarteo* : M *bitarteo* : Sal *bitartea* : Sai *bitarteo*.

[375] gusiequi] <g> aurretik hizki bat tatxaturik.

*2.2.12.2. Iruzkina*

Testu honekin lanean aritu direnen artean ezaguna da transkribatzerakoan duen zailtasun nagusienetako bat lerro artean agertzen diren puntuak direla, ez baitira guztiak <i> baten gainean daudenak. Adibidez, bigarren lerroko *hustegabe* hitzeko bi <e> horien gainaldean puntu bat dago, baina ezbairik gabe bokala <e> da. Hori hala izanik, irakurketa zailekoak dira ondokoak: *beldurrequi*, *beldurriqui* ere irakur bailiteke, eta *illunbetan*, *illunbitan* ere irakur bailiteke.

Horrezaz landara, behin bokalak <~> diakritikoa darama ondoko kontsonante sudurkaria islatzeko: *jãgoycoagana* (3). Hori dela eta, beste batzuetan diakritikoa falta dela dirudi: *horrac* 'honrak' (5), *muduac* 'munduak', *Josafate* 'Josafaten' (14) eta *bitartea* 'bitartean' (15) eta, beharbada, *icuste* 'ikusten' (8). Bestalde, hitz hasieran <hu> erabiltzen da: *hustegabe* (2), *hustel* (9). Horrez gain, <h> espletiboa bide dago *hemen* (1), *honac* (5) eta *haydeac* (7) adibideetan. Dardarkariei dagokienez, anizkuna batzuetan <R>-z eta besteetan <rr>-z islatzen du: *horrac* (5), *arrece* (7), *belduRequi* (3), *çaRaizquidate* (13). Hala ere, <R> ez da anizkunak islatzeko bakarrik erabiltzen, inoiz <r>-rekin batera bakuna islatzeko ere erabiltzen da eta: *eRiciric* (1), *egociRic* (2). Txistukariez den bezainbatez, grafikoki ez dira afrikatuak bereizten: *naça*, *ericiric* (1), *asecabe* (6) eta *içoc* (13). Horretaz gain, nahastea dago igurzkarien artean: *lusean* (4), *gusia* (8), *isanen* (11), *judision* (14), *gusiequi* (15), baina *plazerac* (6), *duçuen* (12), *çarraizquidate* (13). Beharbada hiperzuzenketaz *arrece* (8) dugu; halere, ik. beherago. Herskari aurretik bietarik dugu: *noyzbait* (1), *azqueno* (6), baina *estudan* (11).

Izen morfologiari dagokionez, izenordainetan ezezko polaritatea duen *niorc* (11) aldaera dugu, eta posesiboetan *ene* (3, 12) lehen pertsona singularrean. Olerkian artikulu hurbila lekukotzen da, behin bada ere: *içoc* (13). Soziatiboan *-reki* aldaera dugu beti: *beldurrequi* (3), *elcarrequi* (14), *gusiequi* (15). Instrumentalean *-s* aldaera apikaria da nagusi: *gutis*, *artes* (4), *garitates* (12). Hala ere, kontuan izan behar dugu grafiaren atalean txistukariez dioguna. Bestalde, iluna da *azqueno* (6) adibidearen bukaera, irakurketa garbia den arren. Halere, esanahia 'azkenik, azkenean' da, Mitxelenak eta Salaberrik proposatu bezala. Dena den, badirudi *-o* denborazko kutsua duen atzizkia dela, Elizalderen dotrinak eta Larrasoañako sermoiak dakarten *arteo* 'artean' adibidearen pare. Edonola ere, Salaberrik dioenaren ildotik, **azqueneo* espero genuke; beharbada, hori *eo* > *o* bilakabidearekin azal genezake, Nafarroan ohikoa den *egunero* > *egunoro* hitzean bezala. Azkenik, *judision* (14) daukagu, artikulu gabe. Halere, ez dakigu izen berezitzat hartzen duen edo mugagabean deklinatzen duen.

Aditzei dagokienez, geroaldian *-en* dugu *-n*-z bukatzen diren aditzekin, *isanen* (11), eta *-ren* dago *-tu* partizipioa duten aditzekin, *baturen* (14). Salaberrik (1996: 94) ongi dioen bezala, Nafarroako testu zaharretan ez da ohikoa *-tu*-z amaitzen diren aditzekin geroaldi hori izatea. Aditz trinkoen artean, batetik, *etzan* aditzaren *naça* (1) dugu; bestetik, *egin* aditzarenak ere badira, *nigar begi* (10), *lo dagigun* (15) lokuzioetan; azkenik, *jarraitu* aditzaren *çarraizquidate* (13) NOR-NORI adizkia aipagarri da. Subjuntibo trinkoa ere badago: *ene anima duçuen gomendatu* (12); hortaz, *gomendatu* ez da perifrasiko aditz nagusia, *anima*-ren predikatua baizik. **Edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da: *duçuen* (12). Amenduxen olerki hau da adizki aferesiduna duen lehen testu nafarra: *icusten tut* (8).

Sintaxi aldeti, Linschmann-Aresti legea betetzen da: *ene anima Jangoycoagana beldurrequi partituric* (3), *nigar begi bapederac bere aldias oroituric* (10), *ene anima duçuen gomendatu* (12). Bestalde, *isanen estu* (11) adibidean ezezkoaren hitz hurrenkera zaharra daukagu.

Lexikoan, *edequiric* (5) 'kendurik, harrapaturik' esanahiarekin lehen lekukotasuna da. Era berean, *quirasturic* (9) adibidea *kirastu* aditzaren lehen agerraldia da, eta *garitates* (12) hasierako ahostuna duen lekukotza bakarra da. Bestalde, *isusiric* (9) hitzari Sainz Pezonagak (2006: 75) zentzu morala ematen dio, ez fisikoa; eta osagarri predikatiboa litzateke. Bestalde, *beldurrequi* (3) horretan, *beldur* aldaera dugu, baina Nafarroako testu zaharretan, inoiz, *bildur* ere lekukotzen da. Ez da ziurra *arima* edo *anima* erabiltzen den, nahiz eta *anima* hobetsi dugun guk. Goi-nafarreraz bi formak lekukotzen dira, baina *arima* maizago. Iluna da oso *arrece* (8) hitza; Mitxelena —eta lehenago Irigaraik— *arreci* dakar, eta 'harresi' interpretatzen du. Halere, bukaerako *-e* ziurra denez, proposamenak indarra galtzen du. Hori dela eta, Salaberrik beste hipotesi bat aurkezten du, dituen arazo eta guztiekin: 'harretse' izan litekeela dio. Halere, ez da ziur interpretazio horrekin. Guk ere ez dugu garbi zer izan daitekeen. Halaber, eztabaida dago *partiduric* (11) hitzaren adierarekin. Mitxelenak —eta ondoren *OEH*k (s.v. *partidu*)— 'amparo' adiera ematen dio, beraz, 'nihork ez du izanen, nik ez dudan babesik' litzateke Mitxelenaren interpretazioa. Aitzitik, Satrustegik (1975) beste adiera bat ematen dio. Beste zenbait ahozko eta idatzizko testutan aurkitu duen *partida* 'aurkari, etsai' hitzarekin lotzen du, beraz, Mitxelenak emandakoaren guztiz bestelako interpretazioa luke esaldiak: 'nihork ez du izanen, nik ez dudan etsairik'. Hipotesi horrek duen eragozpena bukaerako bokalean dago, *-u* lukeen aldaera bakarra bailitzateke. Bukatzeko, *bere aldias* (10) agertzen da; dirudienez, hemen *aldi*-k adiera berezia du, eta 'bizitzako denbora' esan nahi du eta genitiboari loturik ageri da zentzu horrekin (ik. *OEH*, s.v. *aldi*, 2. adiera).

Testuak dituen pasarte ilunen artean dago zortzigarren lerroko *arte gutis*, eskuizkribuan *artes gutis*. Pasarte horri eman zaion interpretazio fidagarriena Salaberrik (1996) emandakoa iruditzen zaigu. Hasteko, *a-* irakurtzea hobetsi du, *v-* baino lehen, kontuan harturik Amendux kartzelan ez zela urte bete baino gehiago egon; beraz, atzendutako denbora tartea ez da *urte guti*, baizik eta *arte guti*. Gainera, Beriainen adibide batekin indartzen du proposamen hori; hain zuzen ere, utergarrak bi aldiz erabiltzen du *arte guti bates* 'por algún breve espacio' esateko —Salaberrik erabiltzen duen Beriainen tratatuaren edizioan bigarren adibidean *[.]rte* irakurtzen bada ere, aurkitu dugun Austriako alean argi eta garbi ikusten da *arte* dela; beraz, Salaberriren proposamena berresten du—. Hori horrela, ez da arazorik *artes* idatzita dagoen arren, *-s* huts moduan hartzeko, ondoko hitzekoak eraginda.

Hizkera aldetik nongoa den zehaztea zaila da. Joan Amendux non jaio eta non bizi izan zen ondo jakin arren, bere inguruan zituen senide lapurtar zein behe-nafarren eragina izan zuela dirudi. Esaterako, Nafarroan ez da ohikoa *baturen* gisako geroaldiko formak aurkitzea; izatez, testu zaharretan ez da halakorik. Halaber, *icusten tut* gisako aferesidun adizkiak Nafarroan ez dira beranduagora arte lekukotzen, baina garai bertsuan Etxepare behe-nafarrak bazituen. Lexiko aldetik *OEH*ren arabera (cf. s.v. *judizio*) Amenduxen *judision -d-* daraman aldaera bakarra da Nafarroan; aldiz, ohikoa da Lapurdi eta Nafarroa Beherean. Egoera berbera da *peril* hitzarena, testu hau kenduta, Hego Euskal Herrian ez baita lekukotzen, harik eta Larramendik bere hiztegian sartu arte.

## 2.2.13. Imarkoaingo koplak

Jarraian dakartzagun kopla zahar hauek Imarkoainen kantatu ziren 1600. urte inguruan. Nafarroako Artxibo Nagusiko 1600. urteko 296389 prozesuan daude, 24v eta 25v orrialdeetan. Agiri horretan koplak birritan lekukotzen dira: lehendabizi, lekukoaren testigantza jasotzen denean eta, bigarrena, epaian edo amaierako laburpenean. Auzi-agiria 1600. urtean jazotako gertakari batekoa da; Madariagak (2014: 528) ongi laburbiltzen du kasua: urte hartako San Martin bezperan eta egunean bertan koplak kantatu zizkioten gazteek Espoz izeneko herritar alargundu adindu bati, bera baino andre gazteago batekin ezkondu berri zelako. Prozesuan esaten denez, zintzarriz eta turutez lagundurik kantatu zituzten euskarazko koplak imarkoaindar gazteek, eta horien artean zen Martin Sanz akusatua. Maiorak (2011: 111) eman zituen lehenengoz ezagutzera kopla hauek.

Eskuizkribuan dena jarraian, bertso-lerroak bereizi gabe, idatzita dagoen arren, dirudienez honako bi kopla hauek launa lerro dituzte, eta lehen biek eta azkenengoak dute errima: a a - a. Lehen koplak, agidanez, ohiko egitura dute: lehendabiziko bi lerroetan naturako elementuak agertzen dira konparaziorako (*landa*, *aretze* 'zekorra') eta azken bi lerroetan agertzen da mezua; alegia, kasu horretan, bistan da, koplak sortzeko konturen bat bada; baimenik ez, ordea. Bigarrengo koplan, aldiz, mezua zuzenagoa da eta gertakariarekin lotuago dago. Ustez, koplan bertan aipatzen den Ezpoz da iraindua; dena den, prozesuan gehienetan *marido* agertzen da, baina lekukotza batean «un tal Espoz o Ozcariz» agertzen da (Madariaga 2014: 529). Harekin ezkonarazi zuen Maria Sanestebanek Katalina Arazuri inudea.

Gure edizioa prestatzeko, jatorrizkoaren irudiak erabili ditugu.

### *2.2.13.1. Testua*

<24v> Y oyó que el dicho Martín Sanz cantó en bascuenz lo siguiente:

Landan heder olaçe,
begui duenac areçe.
Liçençiaric paguindu,
coplaçera guendozque.

En una copla, y luego en otra:

Ezpoz çara çu.
Bay acheguin[376] baduçu,
çeure andre[377] galanta ori
ongui besarqueçaçu.

<25v> Estando los dichos acusados en la dicha plaça, comprendió que en dos coplas que cantó el dicho Martín Sanz, acussado, dezía en la una en bascuenz:

Landan heder olaze,
begui duenac areze.
Liçençiaripaguindu,
coplazera guendozque.

---

[376] acheguin] lerro artean gehituta.
[377] andre] esk. *adre*.

Y en la otra:

Ezpoz çara zu.
Bay acheguin baduzu,
çeure andre galanta ori
ongui besarquezazu.

### *2.2.13.2. Iruzkina*

Grafian, <h> espletiboa erabiltzen da bi aldiz hitz berean: *heder* (24v, 25v). Ez da afrikatu eta frikari bereizketa grafikorik egiten txistukarietan, eta *e* eta *i* bokalen aurretik <ç> eta <z> ageri dira: *olaçe*, *areçe*, *coplaçera* (24v), *olaze*, *areze*, *coplazera* (25v).

Fonologiaz den bezainbatez, *b-* > *p-* gertatzen da aurreko hitza herskari ahoskabez amaitzen bada: *liçenciaric paguindu* (24v), *liçenciaripaguindu* (25v). Bestalde, herskari ahoskabea ahostundu egiten da ozen ondotik: *guendozque* (24v, 25v).

Izenordain indartuetan *çeure* (24v, 25v) agertzen da, eta Linschmann-Aresti legea betetzen da: *çeure andre galanta ori ongui besarqueçaçu* (24v, 25v). Aditzen artean, *besarqueçaçu* (24v, 25v) agertzen da, ziurrenik 'besarka ezazu'. Ondorioz, aginteran aditzoina erabiltzen dela ikus dezakegu. Indikatiboko **edun* aditzaren adizki trinkoa dugu, osagarria mugagabean duelarik: *begui duenac* (24v, 25v).

Lexiko aldetik, markatzeko dirudi *areçe*, *areze* 'zekorra' hitz nafarrak. Horrezaz landara, interesgarri da *olaçe*, *olaze* hitza agertzea. Erdi Aroko lekukotasunetan Nafarroan toponimo gisa maiz agertzen da hitz hori (Reguero 2011b: 216). Mitxelenak (1953: § 485) *ol(h)a* hitzarekin lotzen du, eta 'estalpe' esanahia izan dezakeela dirudi. Adiera dela eta, zalantza izan dezakegu bigarren lerroan dagoen *begui* horrekin, 'begi' zein 'behi' izan baitaiteke. Azkenaren kasuan, hiatoa sortzeko sartu den *-g*-dun aldaera baten aurrean geundeke, Nafarroan orokorra den *ago*-ren pareko. Hala izatekotan, 'aretzea duen behia' litzateke esaldiaren esanahia.

## **2.2.14. 1609 Iruñeko txapelketako euskarazko olerki sarituak**

Iruñeko Martin Zalba gotzainak 1388an Corpus eguna festa handiko eguntzat hartu zuen eta, geroztik, ospakizunez beterik egon da. Horren adibideetarik bat besterik ez da, 1609an Gorpuztiko ospakizunen karietara, Iruñeko gotzain Antonio Venegas Figueroak antolatu zuen literatur txapelketa. Dirudienez, XV. eta XVI. mendeetan Europan ohikoak ziren gisa horretako lehiaketak, eta hasieran guztiek zuten gaitzat erlijioa (Urkizu 2000: 167).

Agidanean, 1609ko lehiaketak hamar atal zituen, eta bertan parte hartu behar zuten olerkiek Corpus eguna izan behar zuten gaitzat. Hamar ataletako bakoitzean hiru olerki saritu ziren, eta irabazle guztiak jaso ziren honako liburu honetan: *Relacion de las fiestas que el illmo señor Don Antonio Venegas de Figueroa, obispo de Pamplona, hizo el día del Santissimo Sacramento, y por todo su octavario, este año de 1609. Con las poesias que fueron premiadas, conforme a los certamenes. Dirigida al reverendissimo Padre Maestro fray Antonio Perez, general dignissimo de la religion de San Benito de España y calificador de la Santa Inquisicion*. Iruñean argitaratu zen Mathias Maresen alargunaren eta Nafarroako Erresumako argitaratzailearen etxean.

Euskal filologoontzat interesgarriena liburuaren akabuan dator. Sariketako hamar ataletatik azkenak, gaztelaniaz «Certamen décimo» deituak, euskarari eskaini baitzion lekua:

> Y porque celebrándose en este Reyno de Navarra a la solemnidad de esta fiesta, no es razón que la lengua matriz del Reyno quede desfavorecida, se pide en este certamen un romance de doze coplas en Bascuence, que lleve un estribillo de tres a tres coplas. Y al que mejor lo hiziere se le darán tres baras de tafetán. Y al segundo, dos de olanda. Al tercero, tres pares de guantes blancos. (29r-29v)

Alegia, euskarazko olerkiak aurkez zitezkeen lehiaketara. Ez dakigu zenbatek parte hartu zuten, baina gutxienez hiru autore euskaldun aurkeztu ziren; hain zuzen ere, euskaraz idatzitako lehen hiru olerki sarituak jasotzen dira liburuan: Pedro Ezkurra, Miguel Aldaz eta Joan Elizalde izan ziren irabazleak. Hala eta guztiz ere, ez dugu idazle horien gaineko berri gehiago. Nafarrak direla pentsa daiteke, erabiltzen duten euskalkiagatik eta baita abizenengatik ere. Dena den, testu nafarren artean bakarrak dira zenbait ezaugarri erakusten; adibidez, *egazu* 'ezazu' ez da Nafarroako testuetan gehiago agertzen. 1610ean Iruñean berriro antolatu zen sariketa eta, orduko hartan, euskarazko olerki bakarra izan zen saritua: Martin Portalen olerkia. Autore horri buruz berri gutxi dugu, baina hizkera aldetik ez dirudi nafarra denik (cf. Knörr & Zuazo 1998, Aldai 2012).

Olerki hauen lehen edizio modernoa Vinsonek (1879) argitaratu zuen, Francisco de Zabálburuk bidalitako kopia eskuizkribatuan oinarrituta. Edizio hori aintzat harturik baina begi-bistakoak ziren kopiagilearen hutsak zuzendurik eta puntuazioa eguneraturik, Mitxelenak (*TAV* § 3.1.20) edizio berria aurkeztu zuen. Ezagutzen dugun azken edizio eta azterketa Kerejetak (1991) argitaratu zituen, mikrofilm batzuetan oinarriturik. Caminok (2003b) hegoaldeko goi-nafarreraren corpusean ematen ditu, grafia eguneraturik.

Egun liburuaren *unicum*-a Madrilgo Francisco de Zabálburu liburutegian dago. Guk, zuzenean bertan izanda, hango alea ikusteko aukera izan dugu kalitate onean digitalizaturik, eta horretantxe oinarritu gara gure edizioa prestatzeko. Jakina, Vinsonen (V), Mitxelenaren (M) eta Kerejetaren (K) edizioekin erkatu dugu.

### *2.2.14.1. Pedro Ezkurraren olerkia*

Pedro Ezkurra izan zen sariketako hamargarren ataleko lehen irabazlea «Aldareko gorputz sanduari» izenburuko olerkiarekin:

> En este décimo certamen en que se pide un romance en vascuence, se juzgó deverse el primer lugar a Don Pedro de Ezcurra, y juntamente el premio, que son tres varas de tafetán (80v).

Lehiaketako euskarazko gainerako olerki sarituen antzera, aldareko ostiari eskaintzen zaio; kasu honetan horren handitasuna eta konfesatu gabe janez geroko kalteak azpimarratzen dira: *Báya nái du jan deçáçun, / garbitúric arimá. / Ala ezpáda, çuretáco / vícia ez, baya érioa dá*. Leloa ildo beretik doa: *ongui ohártuz jan egáçu, / il etçáytçan beguiraúçu*.

*2.2.14.1.1. «Aldareko gorputz sanduari»*

<80v> **Aldaréco gorpútç sandúari**

Iaquiteá içán bánu,
borondátea beçalá,
éne anáya, erranen nîçu
nór daucágun[378] mayean.

Ceruetáco jáuna dúgu
gógos jáusten çaiguná.
Çéruan becáyn[379] óso dágo[380]
<81r> guretáco oguián.

Céru éta lúr betatçén du
áren górputz sanduác,
badaríc emáten çáygu
ósoric ámen batean.

Ongui ohártuz jan egázu,
il etçaytçan beguirauçu.

Eri çîran ámen bátez
múnduan guíçon guztiác,
éta égun[381] eman draue[382]
berçe bátec viçíá.

Eçín[383] jan çindúquean[384] çúc
ambatéco amená.
Ála, véra chipitú çe
çúre aguáren neurrirá.

Báya nái du jan deçáçun,[385]
garbitúric arimá.
Ala ezpáda, çuretáco[386]
vícia ez, baya érioa dá.

Ongui ohártuz jan egáçu,
il etçáytçan[387] beguiraúçu.

---

[378] daucágun] jat. *daucâgum* : V K *daucâgum* : M *daucâgun*.
[379] becáyn] jat. *becâyn* : V K *becâyn* : M *beçâyn*.
[380] dágo] jat. *dâgo* : V M *dago* : K *dâgo*.
[381] égun] jat. *êgum* : V K *êgum* : M *êgun*.
[382] draue] jat. *draue* : V *drauc* : M K *draue*.
[383] Eçín] jat. *Eçîm* : V K *Eçîm* : M *Eçîn*.
[384] jan çindúquean] jat. *jançindûquean* : V *jançidûquean* : M *jan çi<n>dûquean* : K *jan çindûquean*.
[385] jan deçáçun] jat. *jandeçâçum* : V *jandeçâçum* : M *jan deçâçun* : K *jan deçâçum*.
[386] çuretáco] jat. *çuretâco* : V *curetâco* : M K *çuretâco*.
[387] etçáytçan] jat. *etçâytçan* : V *etçâyçan* : M *etçây<t>çan* : K *etçâytçan*.

<81v> Gúre anáya[388] eguínez guéro,
máyte dítu guiçonác,
ámbat éçe barcatçén du
paradiçúco jateá.

Eta báqueac eguitéco
bére gógo sandurá,
gúre artéan gueldítú çe,[389]
ála nóla çeruán.

Egun Jáyncoa Jáyncoagátic
guiçonári ematen dá,
báyña Jáyncoa Jáyncoa gábe
jaten duéna iltçen dá.[390]

Ongui ohártuz jan egáçu,
il etçáytçan beguiraúçu.

Ayn goçóro[391] apayndu dígu
óray dígun jate áu,[392]
éçe guiçónac nay bádu
itçul dáyte[393] jateán.

Ongui[394] jáuturic[395] nigarrés,
viótçean[396] dámu duçulá,
becatuén urriquiréqui,
<82r> çarrezquío[397] guztián.[398]

Génde guztiéy óngui eguíçu,
fédean óso çaudelá.
Jáyncoa báytan echidéçu,[399]
ála çayçun vaqueán.

Ongui ohártuz jan egáçu,
il etçáytçan beguiraúçu.

---

[388] anáya] jat. <y>ren gainean beltzune bat dago.
[389] çe] jat. *çe* : V M *ce* : K *çe*.
[390] yltçen dá] jat. *yltçen dâ* : V *yltcendâ* : M *yltcen dâ* : K *yltçen dâ*.
[391] goçóro] jat. goçôro : V M *goçoro* : K *goçôro*.
[392] jate áu] jat. *jate âu* : V M *jateân* : K *jateâ*.
[393] ytçul dáyte] jat. *ytçul dâyte* : V *ylculdâyte* : M K *ytçul dâyte*.
[394] Onguy] jat. *Onguy* : V M *Ongui* : K *Onguy*.
[395] jáuturic] jat. *jâuturic* : V *janturic* : M *jauturic* : K *jâuturic*.
[396] viótçean] jat. *viôtçean* :V M *viotçean* : K *viôtçean*.
[397] çarrezquío] jat. *çarezquîo* : V *carezquîo* : M K *çar<r>ezquîo*.
[398] guztian] jat. *guztiac*. Mitxelenak (*TAV* § 3.1.20) eta Kerejetak (1991: 166) iradoki bezala, hemen zuzentzea erabaki dugu, esanahiagatik hala behar duela baitirudi.
[399] echidêçu] jat. *echidêçu* : V M *echidêçu* : K *echi dêçu*. Kerejetak (1991: 163) *echi dêçu* banatzen du eta, beraz, *duçu*rekin batean, *dêçu* aldaera ere izango luke testuak. Alabaina, guk *echidêçu* mantentzea eta, ondorioz, *etxiden* aditzaren aginterazko forma trinkotzat hartzea hobetsi dugu. Ohart gaitezen esanahi aldetik agintera espero genezakeela ahapaldi bereko *eguíçu*, *janegáçu* eta *beguiraúçu* bezala. Mitxelenak (*TAV* § 3.1.20) adizki honi ohar berezirik egiten ez badio ere, aginterazko formatzat hartzen du.

*2.2.14.1.2. Iruzkina*

Grafiari dagokionez, txistukarietan afrikatuak sistematikoki bereizten dira: *betatçen* (9), *górputz* (10), *etçaytçan* (14). Ziurrenik hitz hasierako <j> grafiak [j] sabaikaria islatzen du; halere *jáuturic* (47) adibidean [ʃ] sabaiaurrekoa dela dirudi. Nolanahi ere, grafia kontuetan deigarriena bokalek batzuetan erakusten duten <^> diakritikoa da. Mitxelenak (*TAV* § 3.1.20) adierazten duenez azentua da, eta erritmo trokaikoa islatzeko baliatzen da olerkian.

Fonologia aldetik, *oa* > *ua* bilakabidearen adibide bat dugu: *aguáren* (22). Horrezaz gain, sinkopa dugu *draue* (17) adizkian. Hasperenik ez da, eta horren galerak eragin duen hiatoa saihesteko *-g-* gehitu da: *aguáren* (22). Asimilaziozko sabaikaritzearen adibide bakarra dugu: *báyña* (39), maizago agertzen den *baya* aldaerarekin batera. Bestalde, **ezan* laguntzailearen adizkietan bi *-z-* egokitu diren kasuetan *z-z* > *-g-z-* disimilazioa gertatu da: *egáçu* (< *ezazu*) (*passim*). Halere, ez da beti gertatzen bilakabide hori: *jan deçáçun* (23). Kontsonante multzoei dagokienez, *-r(t)z-* mantentzen da: *berçe* (18).

Morfologia aldetik, izen morfologian, instrumentalean aldaera apikaria zein bizkarkaria, biak topa ditzakegu: *gógos* (6), *nigarrés* (47), baina *ohártuz* (*passim*), *batez* (15). Soziatiboan *-reki* agertzen da: *urriquiréqui* (49). Destinatiboan *-tako* da erabiltzen den atzizkia, ondoko adibideek erakusten duten bezala: *guretáco* (6), *çuretáco* (25). Amaitzeko, bizidunen inesiboan *baitan* agertzen da: *Jáyncoa báytan* (53).

Aditz morfologiari dagokionez, trinkoetan, *-i(n)-* erroa dugu indikatiboan: *óray dîgun jate áu* (44). Bestalde, *jarraitu* aditzaren aginterazko *çarrezquîo* (50) izan daiteke aipagarri; baita *beguirauçu* (*passim*) adizki aginterazkoa ere. **Edun*-en erroa beti *-u-* da: *dúgu* (5), *du* (31), *duçulá* (48). Kerejetak (1991: 163) *echi déçu* dakar, baina guk *echidéçu* hobetsi eta *etxiden* aditzaren aginterazkotzat hartu dugu (ik. 385. oharra aparatu kritikoan); *OEH*ren arabera (s.v. *itxaron*) ere *etxiden* da. Iraganeko adizkietan amaierako *-n* galtzen da: *erranen nîçu* (3), *chipitú çe* (21), *gueldití çe* (35), baina salbuespen bat bada: *eri çîran* (15). NOR-NORI-NORK saileko indikatiboko perifrasietan *-i(n)-* erroa eta **eradun* ditugu: *erranen nîçu* (3), *eman draue* (17), *apayndu dîgu* (43). Horrezaz landa, aditzoina mantentzen da indikatibozkoak ez diren perifrasietan: *itçul dáyte* (46). Adibide berak erakusten duenez, *-te* mantentzen da, oraindik, ahaleran. Bestalde, iraganeko futuroa dugu, **edun + -ke* egiturarekin: *eçín jan çindúquean* (19) 'ez zenuen jaten ahalko'.

Sintaxiari dagokionez, 'baizik' esanahiarekin erabiltzen bide da *baya*: *vîcia ez, baya érioa dá* (26). Bestalde, ez da TO-GEN egitura: *báqueac eguitéco* (33). Amaitzeko, aditzean datibo komunztadura ez da beharrezko: *guiçonári ematen dá* (38), *Génde guztiéy óngui eguîçu* (51).

Lexiko aldetik, aipagarri begitantzen zaigu, besteak beste, *ámen* (12) *amená* (20) 'mokadu' hitza; Ipar Euskal Herriko eta Nafarroako hizkeretan erabiltzen da. Eremu bertsukoa da *jáusten* 'jaisten' aldaera. Bestalde, *betatçén* (9) 'betetzen' agertzen da; ez da ohikoa Nafarroako lekukotasunetan, baina, besteak beste, Leizarragak, Axularrek eta Materrak erabiltzen dute (cf. *OEH* s.v. *bete*). Azkenik, *goçóro* (43) dago; *OEH*ren arabera (s.v. *gozaro*) lekukotasun zaharrena eta XVIII. mende arteko lekukotasun ziur bakarra. Ohart gaitezen, gainera, adberbioak egiteko *-ro* atzizkia duela.

### *2.2.14.2. Miguel Aldatzen olerkia*

1609ko Corpus eguneko lehiaketa hartako euskarazko olerkien bigarren saria Miguel Aldatzentzat izan zen: «Y el segundo lugar a Don Miguel de Aldaz, y juntamente el premio, que son dos varas de olanda» (82r).

Arestikoaren antzera, honakoan ere ostiari egiten zaio gorazarre eta hori behar den bezala ez hartzeak dakartzan arriskuaz dihardu*: Icusaçu gozo daten / ogui bedeycatu au, / eta xauro jaten dela, / bademaquen biçia. / Alaber eman diroque / damurequi ilçea, / jaten dela bidegabe, / aren ogui sandu au.*

#### *2.2.14.2.1. «Gorputz sanduari»*

<82r> **Gorputç sanduari**

Egun guiçona deytçen du
Jayncoac bere mayera,
eta dacar çerutic[400]
ematen dion oguia.

<82v> Icusaçu gozo daten
ogui bedeycatu au,[401]
eta xauro jaten dela,
bademaquen biçia.

Alaber, eman diroque
damurequi ilçea,
jaten dela bidegabe
aren ogui sandu au.[402]

Iayncoa dugu jatean,
jan egaçu graçian.

Emen dago estaliric
çeru gucien arguia,
guztian beçayn oso dela
den chipienen çatian.

Gure begui becatorec
estacusque iguzqui au.[403]
Ala oray estaliric
<83r> datorquigu jatean.

---

[400] çerutic] jat. *çerutic* : V *çerutic* : M *cerutic<a>* : K *çerutic*.
[401] bedeycatu au] jat. *bedeycatuau* : V M *bedeycatuan* : K *bedeycatuau*.
[402] sandu au] jat. *sandu au* : V M *sanduan* : K *sanduau*.
[403] yguzqui au] jat. *yguzquiau* : V M *yguzquiau* : K *yguzquiau*.

Nay du jan degaçun[404] çuc
legue sanduen arora,
çure[405] arima eramateco
sandu guztien artera.

Iayncoa dugu jatean,
jan egaçu graçian.

Betidanic badaqui
jale dela guiçona.
Ala, jatean il baçe,
jatean drauco viçia.

Baya gayzqui jaten duenic
eçin doaque çerura,
çeren onen jatean dago
aren irabaztea.[406]

Guiçonac boçic jan diro,
çeren baytio fedeac
<83v> bide dela jaten badu,
graçias Jayncoa datela.
Iayncoa dugu jatean,
jan egaçu graçian.

Ian baño len oroyt çaite
nola bertçe[407] ortçegunean
onen artean eman çuen
gaysto bati ogui au.[408]

Emen dago guerturic
erioa eta biçia.
Eliçac erraten digu
bata nola bertçea.

Otoy eguioçu ongui
jate au[409] emen diçula,
eta guero berequi
çeruan[410] biçi luçea.

Iayncoa dugu jatean,
jan egaçu graçian.

---

404 degaçun] jat. *degaçun* : V M *deçaçun* : K *degaçun*.
405 çure] jat. *çure* : V *cure* : M K *çure*.
406 yrabaztea] jat. *yrabatzea*. : V K *yrabatzea* : M *yrabaztea*.
407 bertçe] jat. *bertçe* : V M *bertce* : K *bertçe*.
408 ogui au] jat. *oguiau* : V M *oguian* : K *oguiau*.
409 jate au] jat. *jateau* : V M *jatean* : K *jateau*.
410 çeruan] jat. *çeruan :* V M *ceruan* : K *çeruan*.

*2.2.14.2.2. Iruzkina*

Grafian, txistukari afrikatuak eta igurzkariak bereizten dira: *deytçen* (1), *bertçe* (44). Horrezaz landara, <x> erabiltzen da txistukari sabaiaurrekoa islatzeko: *xauro* (7).

Fonologia aldetik, bokal bikoitzak soiltzen dira, eta *e* + *e* > *e* gertatu da: *bademaquen* (8), *becatorec* (18). Kontsonanteei dagokienez, herskari ahostuna du hasieran *boçic* (37) adibideak. Bestalde, txistukariak disimilatu egiten dira hitz berean bi badaude; horixe da *egaçu* (*passim*) eta *degaçun* (23) adibideetan gertatu dena. Amaitzeko, *r(t)z-* multzoa mantentzen: *bertçe*, *ortçegunean* (44).

Izen morfologiari dagokionez, instrumentalean apikaria dugu, baina adibide bakarra dago: *gracias* (40). Halaber, soziatiboan *-reki* aldaera erabiltzen da: *damurequi* (10), *berequi* (53). Ablatiboan *-tik* erabiltzen da: *çerutic* (3). Azkenik, zalantza eragiten du *becatorec* (19) adibideak: ergatiboa da, *estacusque* (20) aditzaren subjektua, baina forma aldetik plurala izan badaiteke ere, *e* + *e* > *e* egin ondoren, adizkia singularrean dago. Mugagabea ere izan liteke formagatik, baina hori ere bitxia da, *gure begui*-ri dagokionez, mugatua espero baikenuke.

Aditz morfologian, trinkoak maiz ageri dira, aginteran zein ahaleran edo geroaldian: *daten* (5), *bademaquen* (8), *estacusque* (20), *datorquigu* (22), *doaque* (34), *baytio* (38). Aipamen berezia merezi du zortzigarren bertso-lerroko *bademaquen* adizkiak. *OEH*ren arabera (s.v. *eman*), *eman* aditzaren adizki trinkoak Iparraldean XVIII. mendera arte erabiltzen badira ere, Hegoaldean XVI. menderako oso gutxitan lekukotzen da —Etxalekuko koplan (§ 2.2.6) *demana* agertzen da, XVI. mende bukaeran—. Gainera, *-ke* atzizkiarekin, geroaldiko subjuntibo trinkoa dela dirudi. Indikatiboan **eradun* aditzaren trinkoa agertzen da: *jatean drauco* (32). **Edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da: *du* (1), *dugu* (*passim*). Iraganeko adizkien adibide askorik ez dugu. Zehazki, bakarra dugu amaierako konplementatzailerik gabe eta bertan amaierako *-n* galtzen da: *il baçe* (31). Indikatiboko NOR-NORI-NORK sailean *-i(n)-* erroa agertzen da: *ematen dion* (4), *erraten digu* (49). Ahalerazko perifrasietan **iron* agertzen da: *eman diroque* (9), *jan diro* (37). Indikatiboak ez diren perifrasietan aditzoina mantentzen dela dirudi: *oroyt çaite* (43).

Sintaxiari dagokionez, badirudi hiperbatona dagoela *chipienen çatian* 'zati txipienean' (18) adibidean. Bestalde, datibo komunztadura ez da nahitaezkoa: *onen artean eman çuen / gaysto bati ogui au* (45-46).

Lexikoan, *xauro* (7) 'garbiro, garbiki' moduzko adberbioa aipatzeko dirudi, batez ere *-ro* atzizkiaren erabileragatik. Bestalde, *arora* (24) agertzen da, ziurrenik 'arabera'. Mitxelenak dioenez, ez da beste inon lekukotzen (ik., halaber, *OEH*, s.v. *arora*). Dena den, Lizarraga Elkanokoak *ariora* du.

*2.2.14.3. Joan Elizalderen olerkia*

1609ko lehiaketako euskarazko olerki sarituekin amaitzeko, hirugarren eta azken saria Joan Elizaldek irabazi zuen: «El tercero lugar a Don Ioan de Eliçalde, y juntamente el premio, que son tres pares de guantes blancos» (84r).

Aurrekoen ildokoa da hirugarren eta azken olerki saritu hau. Hala ere, oraingoak ez du heriotzarekin beldurtzen gaizki jauna hartzen duena: *Mantena ezpa-*

*gaysqui ere, / ogui utsac mundu onetan, / Jayncoaren itçac deçaque / guiçon gustiei vici eman. / Ala nay du jan deçagun, / aragui ere ogui onetan, / eta vici gaytengatic / dabil beti gure atçean.*

*2.2.14.3.1. «Gorputz sanduari»*

<84r> **Gorputç sanduari**
Ola, guaçen iguitara,
assi[411] gayteçen lanean,
çeren[412] garian çorituric
dago Jayncoa lurrean.

Mantena ezpagaysqui[413] ere
ogui utsac mundu onetan,
Jayncoaren itçac deçaque
guiçon gustiei vici[414] eman.

Ala, nay du jan deçagun
aragui ere ogui onetan,[415]
eta vici gaytengatic
<84v> dabil beti gure atçean.

Çatoste, çatoste, nay baduçue jan
Jangoycoaren[416] itça, ogui eta araguian.

Doan gustiari emanen çayo,
nequearen alocayruan,
iguita deçanarequi
aragui jate otronçean.

Mundu onetaco araguia,
agotic sarr dadinean,
eguiten da gure aragui
estomagoaren[417] suan.

Baña onec viurtçen gaytu,
bere sustancia verean,[418]
eta Jaynco eguin gaitecen
dagogu onla otoytçetan.

---

[411] assi] jat. *aſsi* : V M *ari* : K *assi*.
[412] çeren] jat. *çeren* : V M *ceren* : K *çeren*.
[413] ezpagaysqui] jat. *ezpagaysqui* : V *ezpagaysqui* : M *ezpagayzque* : K *ezpagaysque*. Ik. iruzkinean adizki honi buruz dioguna.
[414] vici] jat. *vici* : V M *viçi* : K *vici*
[415] aragui ere ogui onetan] jat. *aragui ere ogui onetan* : V M *aragui ere onetan* : K *aragui ere ogui onetan*.
[416] Jangoycoaren] jat. *Jangoycoaren* : V *Jayngoycoaren* : M *Jaungoycoaren* : K *Jangoycoaren*.
[417] estomagoaren] jat. *eſto magoaren* : V M *estumagoaren* : K *estomagoaren*.
[418] verean] jat. *verean* : V M *berean* : K *verean*.

Çatoste, çatoste, nay baduçue jan.
Jangoycoaren itça, ogui eta araguian.

Iayetan eçin gabiltçque
berçe[419] garien iguitan,
baña au iguita daiteque
<85r> Corpus Christe[420] egun berean.

Trabaja etzquindeçengatic
gari onen beregitçean,
ultçituric eman çigu
gurutçeco larrañean.

Gari lindo au saltçeagatic
dabilla carriquetan,
eta eros draçogungatic
pregonatçen du onlatan.

Çatoste, çatoste, nay baduçue jan
Jangoycoaren itça, ogui eta araguian.

Assarra ezquindeçengatic
ogui au errepartiçean,
bati ambat ematen dió,
millari nola millatan.

Eta, çati badeçaçu ere
çati nay duçunetan,
beti ossoric guelditçen da
len çeducan gustian.

Ogui beti dirauena
eçarten da may ontan,
<85v> eta ontan Jayncoa jatera
Jayncoa dagogu deytcean.[421]

Çatoste, çatoste, nay baduçue jan
Jangoycoaren itça, ogui eta araguian.

*2.2.14.3.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, nabarmentzekoa da afrikatuak bereizten direla: *beregitçean* (34), *Gurutçeco* (36). Bestalde, herskari aurretik <tç> eta <tz> ditugu *gabiltçque* (29), *etzquindeçengatic* (33). Lehenaren kasuan, beharbada, etimologiagatik markatu nahi izan da afrikatua; bigarrengoan, ordea, arrazoia ez da etimologikoa. Bestalde, behin <g> agertzen da behin txistukari sabaiaurrekoa irudikatzeko: *beregitçean* (34).

419 berçe] jat. *berçe* : V M *bertçe* : K *berçe*
420 Christe] jat. *Christe* : V M *Christi* : K *Christe*.
421 deytcean] jat. *deytcean* : V *deytçean* : M *deyetan* : K *deytcean*.

Fonologiaz den bezainbatez, *oa* > *ua* bilakabidea dugu: *guaçen* (1). Dirudienez, asimilaziozko sabaikaritzea indartsua da: *baña* (23, 31), *larrañean* (36); *dabilla* (38), *millari*, *millatan* (46). Bestalde, txistukariak apikariaren alde neutralizatzen da herskari aurretik, baina ez da sistematikoki egiten: *ezpagaysque* (5), *çatoste* (*passim*), *gustiari* (15). Hasperenik ez da, baina horren galerak eragindako hiatoa saiheste aldera *-g-* gehitu da *agotic* (20) adibidean. Fonologiarekin amaitzeko, aipatzeko dirudite ondoko adibideetako sinkopek: *otronçean* (17), *onlatan* (40).

Izen morfologian azpimarratzekoa da soziatiboko *-reki* aldaera: *deçanarequi* (17). Aditzen kasuan, geroaldia egiteko, *-en* atzizkia erabiltzen da *-n* partizipioa duten aditzekin: *emanen* (15). Bestalde, aditz-izenak egiteko *-te* erabili da *eçarten* (52) adibidean. Jokatuei dagokienez, **edun* aditzaren erroa *-u-* da: *baduçue* (*passim*), *duçunetan* (48). Ahalera trinkoaren adibide bat dugu: *gabiltçque* (29). Iraganeko adizki bat dugu, eta bertan amaierako *-n* galtzen da: *eman çigu* (35). NOR-NORI-NORK sailean *-i(n)-* erroa erabiltzen da indikatiboan: *eman çigu* (35), *ematen dió* (45). Horrekin batera **erazan* ere badugu: *eros draçogungatic* (39). Indikatibotik landako perifrasietan, aditzoina erabiltzen da: *mantena ezpagaysqui* (5), *iguita deçanarequi* (17), *iguita daiteque* (31), *trabaja etzquindeçengatic* (32), *eros draçogungatic* (39), *assarra ezquindeçengatic* (43), *çati badeçaçu* (47). Halere, salbuespena da *assi gayteçen* (2). Behin, *dagogu* (26, 54) dago, NOR-NORI sailekoa da, eta ez du *-ki-* datiboaren marka. Azkenik, oharra merezi du *ezpagaysqui* (5) adizkiak. Mitxelenak eta Kerejetak edizioan zuzendu egin dute, eta potentzialeko *-ke* interpretatu dute hor. Hartara, honelaxe dio Mitxelenak (*TAV* 3.1.20): «*gaizke* tiene que ser el resultado de síncopa en *gaitzake* «nos puede»: cf. a.-nav. *bizi daitzen* «para que vivan» de *daitezen, il gaitzen* «para que muramos» de *gaitezen,* etc.» Dena den, ez dugu baztertzen jatorrizkoa zuzen egoteko aukera; horrela, adizkia *bagaizki* 'bagaitza' izan liteke. Nafarroan, batez ere, XVIII. mendetik aurrera adizki batzuetan *-zki-* nagusitzen da: *erran itzazu* → *erranzkizu*, *litza(ke)* → *lezki*, etab. (§ 3.2.2.2.15). Gainera, *eduki* aditzen pluralean ere, *-zki* dago goi-nafarreraren eremu osoan: *dauzki*, etab. Proposamen honen alde egiten du aditz laguntzaileak. Pluralgile aldaketa hori **ezan* aditz laguntzailearen adizkietan gertatu da, eta Elizalderen olerkiko *ezpagaysqui* aditz laguntzaile hori da. Hala eta guztiz ere, proposamen honek duen eragozpena da Nafarroan ez dela aldaketa hori XVIII. mendearen erdialdera arte lekukotzen; Beriainek, esaterako, *itzazu* erabiltzen zuen, artean. Dena den, lehenago Leizarragak XVI. mendean eta, ondoren, XVII. mendean Oihenartek bazerabiltzaten *-zki* duten adizkiak (Camino 2013b: 141).

Sintaxiari dagokionez, mendeko perpausetan perifrasi zaharra mantendu da, fosildurik bada ere: *iguita deçanarequi* (17), *sarr dadinean* (20), *çati badeçaçu* (47). Helburuzko perpausetan subjuntiboari *-gatik* atzizkia gehitzen zaio: *gaytengatic* (9), *etzquindeçengatic* (33), *eros draçogungatic* (39), *ezquindeçengatic* (43). TO-GEN egitura agertzen da *gari onen beregitçean* (34) kasuan, baina jarraian *gari lindo au saltçeagatic* (37) dugu. Erlatibozkoetan izena ezkerretara dugu ondoko bi adibideetan: *çati nay duçunetan* (48), *ogui beti dirauena* (51). Olerkian, objektua mugagabean agertzen da ondoko adibideetan: *jan deçagun / aragui ere ogui onetan* (9-10), *emanen çayo [...] aragui jate otronçean* (15-18). Amaitzeko, ez da nahitaezkoa datibo komunztadura: *Jayncoaren itçac deçaque / guiçon gustiei vici eman* (7-8).

Lexikoan aipagarri dira *çorituric* 'heldurik' (3), Larramendi aurretik Hegoaldean dagoen lekukotasun bakarra baita. Bestalde, Nafarroa Garaiko eta Behereko lekuko-

tasunetan agertzen da *ultçituric* 'eultzitu, garia jo' (35) aldaera, *OEH*ren arabera (s.v. *eultzitu*). Bestalde, *carriquetan* (38) daukagu; *OEH*ren arabera (s.v. *karrika*), ekialdeko hitza da, baina ez du adibide hau jasotzen. Beriainek ere badauka *carriquetan*, baina *OEH*n ez da jaso. Amaitzeko, *alocayruan* 'lansarian' (16) lekukotzen da olerki honetan; *OEH*ren arabera (s.v. *alokairu*), hori ere ekialdeko hitza da eta gutxitan lekukotua, gainera. Ematen dituen Hegoaldeko adibide bakarrak Elizalderen olerki honetakoa eta Lizarraga Elkanokoaren batzuk dira.

### 2.2.15. Martinez Saratsakoaren lekukotasuna

Jarraian dakargun euskarazko lekukotasun hau 1610ean Andrés Martínez Saratsakoak idatzi zuen latinezko testu batean dago. Ez dugu eskuizkribua osorik ikusi, baina euskarazko zatia ikusteko aukera izan dugu Peter Bakkerrek bidalitako irudiei esker. Andrés Martínez Saratsakoa antonianoa zen, hots, San Antonio Abad-en ordenakoa. Gainera, 1614an liburu bat argitaratu bide zuen Iruñean: *Capitulo Provincial celebrado en la Preceptoria General de S. Antonio de Olite en VIII de mayo MDCXIIII / por el doctor D. Andres Martinez de Sarassa (...) i por los Comendadores de su Provincia. En Pamplona por Nicolas de Assiayn, 1614*.

Itxura guztien arabera, euskarazko pasarteak gaztelaniazko bertso eta errefrauen itzulpenak dira. Lehen bertsoaren iturria ez dugu jakiterik izan, baina bigarrengoaren gaztelaniazkoa bertsioa aski ezaguna bide da. Besteak beste, González de la Torrek 1590ean idatzitako ondoko liburuan agertzen da, 147v orrialdean: *Docientas preguntas con sus respuestas en versos diferentes.*[422] Bestalde, gaztelaniaz dauden azken bi lerro horiek errefrau ezagun batekoak dira,[423] eta Correasek (1627) jaso zuen.

Testua Mensinkek (1958: 227-228) argitaratu zuen, nederlanderaz idatzitako doktorego tesian. Mensiki N.G.H. Deen-ek lagundu zion euskarazko pasartea transkribatzen.

#### *2.2.15.1. Testua*

<28v> **Prima et originalis Hispanorum lingua, vulgo vascuenze**

| | |
|---|---|
| Gauçaric cein da oberena,<br>gueiago valio duena,<br>gueiago irauten duena?<br>Conciencia garbia dela. | ¿Cuál es el más alto bien<br>que más vale, y que más dura?<br>Es la conciencia segura. |
| Id est. | |
| Amorioric etzpalin vadu,<br>sobra balioqui ere urre guçia,<br>erran drazaquetec «erromes». | Si te falta caridad,<br>aunque más oro te sobre,<br>bien te puedes llamar «pobre». |
| Esquerrac erraten tuztela<br>obra gaiztoarengatic<br>negoçiaçen dute guizon adituec. | Dando gracias por agrabios<br>negocian los hombres sabios. |

[422] <https://books.google.es/books?id=i8UjF7Q2Q-UC>.
[423] <http://cvc.cervantes.es/lengua/refranero/ficha.aspx?Par=58431&Lng=0>.

### *2.2.15.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, kasu batean <tz> dugu herskari aurretik, baina ez dirudi frikaria islatzeko denik: *etzpalinvadu*. Gainerakoan, ez da frikarien eta afrikatuen arteko bereizketa grafikorik: *negoçiaçen*.

Fonologia aldetik, *etzpalinvadu* adibideak erakusten du txistukariz amaitu eta herskari ahostunez hasten diren bi hitz elkartzean asimilatu eta herskaria ahoskabetu egiten dela.

Morfologiari dagokionez, ergatiboan *-ek* dago: *negoçiaçen dute guizon adituec*. Aditzei begiratzen badiegu, ikus daitekeenez, **edun*-en adizkietan *-te* da ergatiboaren pluralgilea: *dute*. Bestalde, NOR-NORI-NORK sailean **erazan* agertzen da, datiboa maskulinoko *hi* delarik: *drazaquetec* 'diezaakete'. Horrezaz gain, aditz laguntzaile sinkopatua dugu: *erraten tuztela* 'erraten dituztela'.

Oro har, testuak ulertzeko zailtasunik ez badu ere, euskarazko bigarren ahapaldian dagoen *balioqui* hitza ez da interpretazio errazekoa. Batetik, soziatibotzat har daiteke eta 'balioareki' interpretatu. Horrek ez luke arazorik izango hegoaldeko goinafarreraz ohikoa baita *-reki* aldaera. Dena den, lekukotasun zaharretan *-reki* dugu genitiboarekin, ez hemen bezala *-ki*. Bestetik, aditz trinkotzat har daiteke, 'balioke, emango balio' esanahiarekin. Gaztelaniazko ordainari begiratzen badiogu, ez da erraza suertatzen interpretazio bat edo bestea onartzen; «aunque más oro te sobre» esaldiaren ordainak euskaraz izan litezke «sobera balioarekin ere urre guztia» edo «sobera emango balio ere urre guztia».

Lexikoan, ekialde zabalean agertzen den *erran*, *erraten* dago. Bestalde, gaztelaniazko itzulpenean esaten denez, *erromes* hitzaren adiera 'behartsua' da. *OEH*ren arabera (s.v *erromes*), goi-nafarreraz, Mendiburuk eta Lizarraga Elkanokoak erabiltzen dute, baina lehenango ere agertzen da. Saratsakoaren lekukotasun honetaz gain, *errumes çar* dago Añorbe-Tirapun 1546an, *erromessori* San Vicenten 1578an eta *errumes* Arreko 1612ko kopletan.

## 2.2.16. Arreko koplak

Oraingoan dakartzagun kopla hauek lehendik ezagutzen genituen ziri-koplen bilduma osatzera datoz. 1612an kantatu ziren Arren. Dirudienez, urte hartako abuztuaren 16an Arreko zenbait bizilagun aritu ziren herriko kaleetan zintzarriekin, kanpaitxoekin eta txirulekin kopla hauek kantatuz. Jo puntuan zuten Jeronimo Berriokoa herriko bikarioa. Hori dela eta, lehen hiru koplak haren etxe atarian kantatu ziren. Dena den, ez zuten zirikatzaileek jomuga bakarra, eta herriko zenbait emakumeren aurka ere kantatu zuten. Hain zuzen ere, laugarren kopla Txarles Arlegikoaren eta Maria Martin Soraurenen etxean abestu zuten. Aldiz, azkena Juan Artikakoa *Alemanaren* eta Antonia Soraurenen atarian kantatu zuten. Bikarioa herriko zenbait neskarekin amodiotan ibili bide zen eta Arreko kontzejuarekin auzia galdu zuen. Kopla hauek Maria Larrasoaña bikarioaren ilobaren ahotik jaso zituen idazkariak, agiria idazteko orduan. Koplen aurretik, bada euskarazko esaldi zati bat, baina ez dakigu lekukoaren esaldia den ala beste kopla baten zati bat den. Koplak hiru aldiz agertzen dira prozesuan: lehena lekukoaren testigantza jasotzean, bigarrena epaian eta azkena epaiaren kopian.

Kopla hauek Ruiz Astizek (2015: 143-144) jaso zituen, transkripzio huts batzuk eginda. Guk, ordea, Peio Monteanori esker izan dugu kopla hauen berri. Euskarazko testuok biltzen dituen agiria Nafarroako Artxibo Nagusian dago, 41424 zenbakidun erreferentziarekin. Egoera oso txarrean dago eta orrialde batzuk suntsiturik eta apurturik daude, baina digitalizaturik ikusteko aukera izan dugu.

Arestian aipatu bezala, itxura guztien arabera, XVII. mendean ohikoak ziren zirikoplatzat hartu behar dira, eta merezi luke neurriari buruzko ikerketa saio sakonago bat egitea, ez baita beti erraza neurria zehatz jakiten. Dena dela, dirudienez, lehen koplaren neurria 7a / 7a / 8- / 10a da eta bigarrenarena 8a / 8a / 8- / 8a. Hirugarrenak 7- / 7- / 9- / 8a / 8a neurria du. Halere, prozesuan bertso-lerroak bereizi gabe daude; geuk egin dugu banaketa, tartean dagoen gaztelaniazko testua kenduta. Gainera, aipatu bezala, neurriaren kontua ez dago garbi, eta merezi luke sakon aztertzea goranzko diptongoak ote dauden begiratzeko.

### *2.2.16.1. Testua*

Orra Galanteneco echecoandrea […]uan dirua atzarric don Hieronimo.

Jeronimo Berrio Arreko bikarioaren etxean kantatutako koplak:

| 1. bertsioa | 2. bertsioa | 3. bertsioa |
|---|---|---|
| […] lasterrean,<br>gança duela vizcarrean.<br>Orr[…] Hie[…]<br>badu bodin bat çorri<br>[vizcarrean | Arza doaye lasterrean,<br>ganza duela vizcarrean.<br>Orra don Heronimorrec<br>badu bondi bat çorri<br>[vizcarrean | Harza duaye lasterre[…]<br>[…].<br>Orra don Xeronimo ori<br>badu bondi bat çorri<br>[vizcarrean |
| Erbia doaye lasterrean,<br>conexua darrayola açean.<br>Orra don Hieronimo ori<br>vere amoranteen açean | Erbia doaye lasterrean,<br>conexua darrayola açean.<br>Orror don Hierominori<br>bere amoranteen açean. | Ervia doaye lasterrean,<br>conexua darrayola[424] açean.<br>Orra don Jeronimo<br>bere amoranten açean. |
| […]<br>vere auçia galduric.<br>Çilbetiarrec eramaten dute<br>[…]<br>Don Hieronimo omena. | Orra Don Hieronimo<br>bere auzia galduric.<br>Çilbetiarrec eraman dute<br>errumes camioan barrena<br>don Hieronimo omena. | Orra Don Hieronimo<br>bere aucia galduric.<br>Çilbetiarrec eraman dute<br>errumes camioan barrena<br>don Jeronimo omena |

[424] darrayola] esk. *darayola*.

Charles Arlegui eta Maria Martin Soraurenen etxean kantatutako kopla:

| 1. bertsioa | 2. bertsioa | 3. bertsioa |
|---|---|---|
| | Mari Martinori tristeric,<br>nola ezpaytu miraric,<br>Don Hieronimori xarri çayo<br>dolu mantua jaunçiric.<br>Aniçetan joan bazayo<br>gueçur andien erratera<br>ollasco parea arturic. | Mari Martinori tristeric,<br>nola ezpayto miraric,<br>Don Heronimo xarri çayo<br>dulo mantua jaunçiric.<br>Aniçetan joan vaçayo<br>gueçurra diote erratera<br>ollasco parea arturic. |

Juan Artika, *Alemana*, eta Antonia Soraurenen etxea kantatutako kopla:

| 1. bertsioa | 2. bertsioa | 3. bertsioa |
|---|---|---|
| Don Hieronimo tristeric,<br>nola ezpaytu miraric,<br>Antona galant Alemanencoari<br>joan çayo consolaçera[425]<br>[galantic. | Don Hieronimori tristeric,<br>nola ezpaytu miraric,<br>Antona Alamanenecori<br>joan çayo consola[…] ga-<br>lantic. | Don Heronimo tristeric,<br>nola ezpaytu miraric,<br>Antona Alemanenecori<br>joan cayo consolaçera<br>[galantaric. |

### *2.2.16.2. Iruzkina*

Grafiari dagokionez, aipagarri dateke grafia etimologikoetan txandaketa aurkitzea *Heronimo*, *Xeronimo* eta *Hieronimo* pertsona izenetan.

Fonologian, bokalismoan *oa* > *ua* dugu *duaye* kopla batean, baina *doaye* dago beste batean. Beharbada silaba kopuruagatik izan daiteke, baina bokal bikoitzak ditugu *amoranteen* adibidean. Halere, ez da bokal bikoitzik kopla beraren azken bertsioan, bertan *amoranten* agertzen baita. Silaba kopurua eta koplaren neurria azter dadinean, jakin liteke goranzko diptongoak dauden ala ez eta, beraz, besteak beste, *vizcarrean* hitzak hiru edo lau silaba dituen. Dena den, batzuetan badirudi diptongoa dugula. Kontsonanteei dagokienez, ez dago oso garbi **j-* zaharraren ahoskera [x] belarra, [ʃ] sabaiaurrekoa ala [j] sabaikaria den; *xarri* agertzen da, baina *jaunçiric* eta *joan* ere bai. Gainera, grafian ikusi bezala, <x> belarrerako erabil daiteke.

Aditz morfologiari dagokionez, *joan* aditzaren *doaye* eta *duaye* aldaera nafarrak lekukotzen dira, eta *jarraitu* aditzaren *darrayola* forma trinkoa dugu, baita **io* aditzaren *diote* ere. **Edun*-en adizkietan *-te* pluralgilea erabiltzen da ergatiboan: *dute*.

Sintaxiari dagokionez, TO-GEN egitura agertzen da: *gueçur andien erratera*.

Lexiko aldetik, ikus dezakegunez, *erran* erabiltzen da. Bestalde, aipagarri dateke *omena* hitza. *OEH*ren arabera Gipuzkoan, Nafarroan, Lapudin eta Nafarroa Beherean erabiltzen bada ere, Hegoaldean Ubillosena zen, orain arte, XIX. mende aurreko

[425] consolaçera] lerro artean erantsia.

lekukotasun bakarra. Arreko lekukotasun hau da hitzaren lehen agerraldia, idatzian aurrenekoz erabili zuena Etxeberri Ziburukoa baita, *OEH*ren arabera (s.v. *omen*). Ia lekukotu gabeko hitza da *bodin* neurri mota bati dagokion izena (ik. *OEH* s.v. *bodin*); halere, kopla hauetan *bondi* ere agertzen da. Ez dakigu hutsa den edo aurrekoaren aldaera. Horrez gain, *gança*, *ganza* 'koipea, bilgorra' agertzen da kopletan. Amaitzeko, *jaunçiric* aldaera lekukotzen da, Nafarroan, Lapurdin eta Nafarroa Beherean erabiltzen den aldaera *OEH*ren arabera (s.v. *jantzi*).

### 2.2.17. Zannettiren kredoa

Kredo hau 1614an argitaratu zen Erroman *Symbolum SS. Apostolorum diuersis nationum linguis expresum* liburuan (Romae, Apud Bartholomaeum Zannettum). Bartolomeo Zannetti, beraz, liburuaren argitaratzailea izan zen eta pentsa daiteke euskarazko otoitza lehengo idatzizko edo —askoz ere zailago— ahozko tradiziotik hartu zuela. Hori dela eta, Mitxelenak (*TAV* § 3.2.11) ez zuen baztertu Antso Eltsokorena izateko duen aukera.

Liburuko 7-20 orrialdeetan kredoa hogei hizkuntzatan biltzen da; liburuaren deskribapen oso baterako, ik. Bidegain (1967: 186-189). Lehenik, 7. orrialdean latinez ematen da otoitza eta, ondoren, orrialde bakoitzean bi zutabe erabiliz, beste hemeretzi hizkuntzatan. Bi zutabeetako batean kredoa beti letra biribilez idatzita dago eta bestean letra etzanez. Otoitz bakoitzaren azpian Testamentu Berriko pasarte bat dago, otoitzaren alderantzizko letrakera motan inprimatua. Euskarazko bertsioa 14. orrialdean dago, eskuineko zutabean eta letra etzanez idatzita, ezkerrekoan eta letra biribilez sardinierazko bertsioa duelarik. Bidegainen arabera (1967: 186), azken hau sardinieraren dialekto logurdorearrari legokioke, nahiz ez duen horren aldeko arrazoirik ematen; beharbada, dialekto hori izan delako kultur prestigio handiena izan duena.

Dakigularik, testuaren lehenengo edizio modernoa Vinsonek eskaini zuen bere bibliografiari egindako emendatze eta zuzenketetan (1891-1898: 1287, 731); ondoren, edizio horretan oinarriturik, Mitxelenak (*TAV* § 3.2.11) eman zuen berriro argitara, <ʃ> guztiak <s> bihurtuz eta puntuazioan aldaketaren bat eginez. 1967an Bidegainek argitaratu zituen Zannettiren liburuaren azala eta euskarazko kredoa dagoen orrialdea. Satrustegik (1990b), Aresoko kredoaren berri eman zuelarik, bi kredook erkatu zituen. Horrezaz landara, Salaberri Muñoak (2006) testuaren edizio berri bat aurkeztu zuen Bidegainen irudietan oinarriturik eta, iruzkinean ikusiko dugunez, testuak dituen zenbait zailtasun ulertzeko iradokizunak egin zituen. Azkenik, goi-nafarrerazko testuen edizio berriak egin beharraz geniharduela, Vinsonen edizioaren, Mitxelenarenaren eta jatorrizkoaren arteko konparaketa egin genuen, hiruren artean dauden transkripziozko desberdintasunak markatuz (Reguero 2014).

Bartolomeo Zannetti tipografoak (15..-1621) hainbat lan inprimatu zituen Erroman 1607tik 1621ean hil zen arte, bai latinez eta bai italieraz. Ondoren, haren oinordekoek jarraitu zuten inprimategiarekin lanean.[426]

Vinsonek testua ezagutzera eman zuenetik, euskalaritzaren barruan *Zannetto* deitura erabili izan da, baina haren liburuetan ez da inoiz horrela idatzita agertzen, *Zannetti* baizik.

---

426 <http://data.bnf.fr/ark:/12148/cb12239517p>, <http://www.idref.fr/075178516>.

Hona dakargun edizioa Eusko Legebiltzarrak sarean duen alean[427] oinarritzen da (jat.), eta irakurketa batzuetan Vinson (V) eta Mitxelenarenetik (M) aldentzen da; halako desberdintasunak aparatu kritikoan markatu ditugu.

### *2.2.17.1. Testua*

<14b> [*gurutzea*]

**Cantabria. Biscaya.**

1. Sinestasen[428] dut Jaun poderosoaren vaytan, ceruaren eta lurraren[429] creatorearen[430]
2. eta Jesu Christo vere seme unigenito jaunaren vaytan,
3. sein ucandu baysen concevituric Spiritu Santu jaunaren obras, eta jayo sen virgen andre dona Mariaren vaytatic.
4. Eta padecitu çuen Pontio Pilatoren[431] manuaren aspian, crucificatu ucandu sen, il eta orsi[432] ucandu sen.
5. Eta jausi sen infernura. Irugarren egunean resuscitatu sen ilen vitartetic.
6. Eta igan sen ceruetara. Eta dago jarreric[433] Jaun poderosoaren escuñean.[434]
7. Eta andica etorrico da vicien eta hilen jusgacera.
8. Sinestasen[435] dut Spiritu Sanduaren vaytan,
9. Elisa catolica sanduaren vaytan, sanduen comunionean,
10. pecatu gucien parcamentuan,
11. araghiaren[436] resuscitacean[437]
12. eta vici perdurablean.

Amen.

### *2.2.17.2. Iruzkina*

Grafiari dagokionez, aipagarri dateke *araghiaren* (11) adibidean daukagun <gh> digrafoa. Dagoeneko Bidegainek (1967: 186) iradoki bezala, ortografia italiarren eragina da. Bestalde, grafia kultista batzuk agertzen dira: *Spiritu* (3, 8), *Pontio* (4),

---

427 <http://www.liburuklik.euskadi.net/handle/10771/8787>.

428 Sinestasen] jat. *Sinestasen* : V M *Sinistasen*

429 lurraren] jat. *luraren* : V M *lurraren*.

430 ceruaren eta lurraren creatorearen] jat. V M *creatorearen ceruaren eta lurraren*; badirudi hutsa dela, honetaz gehiago, ik. iruzkina.

431 Pilatoren] jat. V M *Pilato*. Ez goi-nafarrerazko testu zaharretan, ez gainerako euskalkietan ez da agertzen [I + *manu*] gisako hitz elkarturik; dotrinetan orokorrak dira, aldiz, genitibodunak.

432 orsi] jat. *orsi* : V M *orci*.

433 jarreric] Mk iradokitzen du *jarriric* irakurri beharko litzatekeela.

434 escuñean] jat. *escunean*; cf. *escuñean* 1614 aurreko katexima zatietan (§ 2.3.2; Irigarai 1963: 151).

435 Sinestasen] jat. *sinestasen* : V M *Sinistasen*.

436 araghiaren] jat. *araghiaren* : V M *Araguiaren*.

437 resuscitacean] jat. *resuscitacean* : V M *resuscitatean*; baina Mk *resuscitacean* irakurri beharko litzatekeela iradokitzen du.

*Reſuſcitatuſen* (5), *Reſuſcitacean* (11). Hala ere, ezbairik gabe, testu labur honen arazo handienetako bat txistukarien grafian kausitzen dugu. Kasu batzuetan <ʃ> erabiltzen da, baina ez du beti balio fonologiko bera. Batetik, igurzkari bizkarkari bat islatzen du: *jayoſen* (3), *aſpian*, *ucanduſen*, *orſiucanduſen* (4), *jauſiſen*, *Reſuſcitatuſen* (5), *iganſen* (6), *Elyſa* (9); baina, hauekin batera, bizkarkaria <c$^{e,i}$> eta <ç> grafemen bitartez ere irudikatzen da: *ceruaren* (1), *concevituric* (3), *padecituçuen*, *crucificatu* (4), *ceruetara* (6), *vicien*, *jusgacera* (7), *Pecatugucien* (10), *Reſuſcitacean* (11), *vici* (12). Aldiz, <ʃ>-k bizkarkari afrikatua islatzen bide du ondokoetan: *Sineſtaſendut* (1), *bayſen* (3). Eta apikaria ere adierazten du, igurzkaria edo afrikatua izan: *Sineſtaſendut* (baina *Sinestaſendut* (8)), *poderoſoaren* (1), *Jeſu Chriſto*, *ſeme* (2), *ſantu* (3), *jauſiſen*, *Reſuſcitatuſen* (5), *poderoſoaren*, *eſcunean* (6), *ſanduaren* (8, 9). Nolanahi ere den, igurzkari apikarirako <s> ere badarabil: *obras* (3), *jusgacera* (7). Liburuan dauden beste hizkuntzetako testuetan begiratu dugu azalpenak aurkitze aldera, baina ez dugu halakorik aurkitu: latinezko, italierazko, frantsesezko, portugesezko eta gaztelaniazko testuetan <ſ> agertzen da <s> grafemaren aldaera bezala, baina hitz barruan bakarrik, inoiz ez hitz bukaeran. Amaitzeko <h> grafema behin agertzen da eta *i*-ren balio bokalikoa islatzeko dela dirudi: *hilen* (7) (cf. *ilen* (5)).

Fonologiaren arloan esateko gutxi dago, ez bada hitz hasieran herskari ahoskabea dagoela: *pecatu*, *parcamentuan* (10).

Izen morfologiaz esateko dira, batetik, instrumentalean *-s* apikaridun aldaera agertzen dela, *obras* (3), eta, bestetik, ablatiboan *-ica* ageri dela: *andica* (7). Gainera, bizidunen kasuetan *baita-* dugu: *Poderosoaren vaytan* (1), *jaunaren vaytan* (2), *andre dona Mariaren vaytatic* (3).

Aditz morfologiaz den bezainbatean, *ucandu* (3, 4) aditzean partizipio pleonastikoa ageri da. Jokatuei dagokienez, *izan* aditzaren iraganaldiko erroa *-e-* da: *baysen*, *jayo sen*, (3) eta **edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-*: *dut* (1, 8).

Sintaxiaren aldetik, TO-GEN egituraren bi adibide ditugu: *vicien eta hilen jusgacera* (7) eta *araghiaren resuscitacean* (11).

Lexikoari dagokionez, aipagarri dira goi-nafarreraz ohikoak diren *sinestasen* (1, 8), *orsi* 'ehortzi' (4) eta *jausi* (5) aldaerak.

Horrezaz gain, testuak dituzkeen berezitasunen artean, lehenengo esaldian dugun sintaxi bihurria izan liteke: *Sinestasen dut Jaun poderosoaren vaytan creatorearen ceruaren eta lurraren*; ziurrenik, «Sinestatzen dut Jaun poderosoaren vaytan, ceruaren eta lurraren creatorearen eta Jesu Christo vere seme unigenito jaunaren vaytan» ulertu beharko litzateke. Salaberri Muñoak (2006: 866-867) gainerako dotrina zaharrekin erkatzen du sarrera hau, eta ondorioztatzen du ez dela hiperbatonik edo hizkuntza jolasik. Aitzitik, argitaratzailearen hutsari egozten dio sintaxi bitxi hori, alegia *creatorearen* zegokion lekuan sartu beharrean, «goiko lerrora igo zuela pentsa liteke» (Salaberri Muñoa 2006: 866). Aurrerago, argudiatzearekin jarraitzen du:

> arrazoizkoa litzateke pentsatzea bertsio elebidun batetik jasoa izan zela, ezker aldean erdarazko (gaztelaniazkoa, seguruenik) bertsioa eta eskuin aldean euskarazkoa. Ohi bezala, erdarazko bertsioa gehiegi behartu gabe agertu zen «hiperbaton» gisakorik gabe, alegia. Baina ezkerreko bertsio horren inprenta-«kaxek» bortxatuta, lerro-aldaketarik gehienak eskuin aldeko zutabean gertatuko ziren, bertan sartzen ez ziren hitzak edota silabak goiko (edo beheko) lerrorantz eramanez, eta, normalean, lerro hartako testutik parentesi marka huts batez bereiziz. (Salaberri Muñoa 2006: 867)

Dena dela, erdarazko ereduaren hurrenkeraren eragina ere izan liteke.

Aipatu izan den bigarren berezitasuna *ukan* aditzaren erabilerari dagokio: *ucandu baysen concevituric* (3), *crucificatu ucandu sen*, *il eta orsi ucandu sen* (4). Mitxelenak zioenez, «faltaba todo indicio de que el participio transitivo (*ucandu*) hubiera suplantado en alguna parte al intransitivo en los usos originalmente propios de éste, tal como aparece en tres ocasiones en un texto tan breve como el que comentamos» (*TAV* § 3.2.11). Berezitasun hau ere Salaberri Muñoak (2006: 867) transkribatzailearen hutsari egozten dio; proposatzen du jatorrizkoan *içandu* edo *icandu* egon zitekeela eta argitaratzaileak gaizki irakurri edo gaizki papereratuko zuela. Hala eta guztiz ere, testu honetan *ucandu*-ren agerraldi guztiak egitura pasiboak dira, ez iragangaitzak, Mitxelenak eta Salaberrik uste bezala; hortaz, ez diogu inolako berezitasunik ikusten.

Mitxelenak (*TAV* § 3.2.11) dioen bezala, testu hau goi-nafarreraz idatzirik dago, eta hainbat izan litezke hori pentsatzeko arrazoiak. Besteak beste, instrumentaleko aldaera apikaria erabiltzea, edo lexikoan *sinestasen*, *orsi* eta *sandu* aldaerak agertzea. Euskalki honetako iparraldeko aldaerakoa da, ezbairik gabe, iraganeko *-n* mantentzen baita: *sen* (*passim*), *çuen* (12). Kredoaren egilea nor zen edo argitaratzaileak nondik atera zuen, ordea, ezin jakin.

### 2.2.18. Orreagako Amari egindako bertsoa

Bertso hauek Juan de Huartek 1617an idatzi zuen *Historia de Roncesvalles* liburu eskuizkribatuan lekukotzen dira, 83. folioan. Hain zuzen ere, testu nagusiaren albo batean orriaren ezkerraldeko goiko ertzean agertzen dira, eta Huarte bera izan liteke bertsoa liburuan idatzi zuena.

Juan de Huarte (*ca.* 1550-1625) Atarrabian jaio zen eta Salamancan Teologian lizentziatu zen. 1598tik Orreagako Kolegiatako kalonjea izan zen, eta 1609tik hango nagusiordea, 1625ean hil arte (Ibarra 1936: 574-575). Daranatzen arabera (1912), Huarte 1620an hil zen; alabaina Luis del Campo medikuak, Antso Azkarraren altuerari buruzko artikulu batean (1952: 484), adierazten digu 1622an, Antso erregearen gorpua Orreagako hilobi zaharretik berrira aldatu zenean, Huarte horren lekuko izan zela eta gorpuaren aldaketari buruzko hainbat zehaztasun idatzirik utzi zituela. Guk aintzat hartu dugun heriotza urtea Nafarroako Liburutegiaren katalogoan ematen den 1625ekoa da, ziurrenik Ibarrari hartua.

Bestalde, Daranatzek (1912), eta hari jarraikiz Mitxelenak (*TAV* § 3.1.24), eskuizkribuak 1619ko data duela dioskute, baina eskuizkribuaren azalean «año 1617» irakurtzen da argiki. Guztiarekin ere, nahasmendu handia bide dago bibliografian eta beste datazio batzuk idoro daitezke, hala nola 1624 (Torres 1945: 377).

Daranatzek (1912) eman zuen ezagutzen den testuaren lehen edizioa eta Mitxelenak (*TAV* § 3.1.24) berriro argitaratu zuen, puntuazioa eguneraturik. Gure edizioa egiteko Nafarroako Liburutegi Digitalak sarean duen faksimilean[438] eta, bereiziki, Orreagako gaiak lantzen dituen *Visitar Orreaga/Roncesvalles* blogean agertzen den argazkian oinarritu gara (El manto de Roncesvalles 2012).

---

[438] Historia de Roncesv[alles] [Manuscrito] / escrita p[o]r el Canonigo Dn. Juan de Huarte. Año 1617 <http://www.navarra.es/appsext/bnd/GN_Ficheros_PDF_Binadi.aspx?Fichero=BCR00Lib62700000000000000000000410.pdf>.

Bertsoek zortziko txikiaren metrika dute: 8- / 7a / 8- / 7a. Hala ere, lerro guztien silaba-kopurua erregularra izatera, zenbait bokal bilkura —ez guztiak baina— goranzko diptongo gisa ahoskatu beharko ziren: *Orierriagan* (4 silaba), *gloria* (2 silaba), *Sandulariac* (4 silaba), *Jaincoac* (2 silaba) eta *benedictio* (4 silaba); aldiz, ez bide dago sinalefarik.

### *2.2.18.1. Testua*

Aynguiruen erreguina
Orierriagan xarriric,
aynguiruen compañian
gloria guztiz veteric,

[Zu][439] zarade ederrena
creaturen ertean,
gloria ere andiago
çeru eta lurrean.

Sandulariac ecusi du
gozo andis beteric;
Christo[440] Jaincoac eman dio
benedictio ederric.

### *2.2.18.2. Iruzkina*

Grafien interpretazioari dagokionez, aipagarri da **j-* zaharraren [ʃ] ahoskera, *xarriric* (2) adibidean ikus dezakegunez. Mitxelenak (*FHV* § 9.3; *TAV* § 3.1.24) iradoki bezala, igurzkari sabaiaurreko ahoskabearen lehen aztarna bide da, grafia-aldaera hutsa ez bada behintzat. Bestalde, *benedictio* (12) grafia kultistak latinezko hitza adieraz balezake ere, litekeena da /benedikzjo/ ahoskera irudikatzea. Aditzetan *e-* zaharra mantentzen da, asimilaziorik gabe: *ecusi* (10). Bertsoen metrikak eskatzen dituen goranzko diptongoek orduko benetako ahoskera isla zezaketen, egun ere Nafarroako hainbat hizkeratan goranzko diptongoak ahoskatzen baitira.

Instrumentalean goi-nafarreraz ohikoa den *-s* apikaria eta euskaran orokorra den *-z* bizkarkaria agertzen dira, adibide banatan: *andis* (10) eta *guztiz* (4), hurrenez hurren. Aditz morfologiaz den bezainbatez, *izan* aditzaren bigarren pertsonaren erroa *-a-* da eta *-de* plural pleonastikoarekin ageri da: *zarade* (5). NOR-NORI-NORK saileko adizki bakarrean *-i(n)-* erroa aurkitzen dugu: *dio* (11).

Lexikoari bagagozkio, bertso hauetan agertzen den *Orierriaga* (2) egungo Orreagari dagokio, Nafarroako San Juan monasterioko agirietan ere 1284an lekukotzen

[439] Zu] hemen orria hautsirik dago, baina *zu* berreraiki liteke, bai <u> baten aztarna ikus litekeelako, bai ondoren datorren aditzaren subjektua delako eta bai silaba aldetik bat gehiago behar lukeelako lerro honek.

[440] Christo] esk. *Jhs* laburduraz. Metrika arrazoiengatik *Christo* moduan osatzea hobetsi dugu, ez *Jesucristo*.

baita (*TAV* § 2.1.8).[441] Daranatzek eta Mitxelenak erakusten duten bezala, *sandulari* (9) hitzak 'erromes' esan nahi du; eta Leizarragak familiako den *saindoren* 'erromesaldi' erabiltzen du, eta Pouvreauk *saindurale* eta *senjorale*. *Ertean* (6) aldaera Nafarroa Garaiko lekukotasun gehiagotan ere agertzen da, besteak beste, *ertetic* Aresoko kredoan (xvi. m.; § 2.3.1); Elizaldek ere aldaera bera darabil: *irurgarren egunean erresucitatu ce ilen ertetic*.

Testuaren laburra gorabehera, zalantza handirik ez da goi-nafarreraz idatzirik dagoela; zenbait ezaugarrik hizkera honetakotzat hartzeko arrazoiak ematen dizkigute bederen, hala nola instrumentaleko *-s* aldaera agertzeak, *-z* bizkarkariarekin txandaketan agertzen bada ere. Dena dela, halako txandaketak ohikoak dira goi-nafarrerazko testu zaharretan; Beriainek, esaterako, bietarik ditu. Orobat, *erte* 'arte' aldaera.

### 2.2.19. Isastiren euskarazko testuak

Lope Martinez Isasti 1565ean jaio zen Lezon eta 1626an hil zen. Dakigularik, bere ibileran, bi liburu idatzi zituen. Bata 1618an: *Relación que hizo el Doctor don Lope de Ysasti presbytero y beneficiado de Leço que es en Guipúzcoa acerca de las maleficas de Cantabria por mandado del Sr Inquisidor Campofrío en Madrid*. Bestea 1625ean idatzi zuen: *Compendio historial de la M. N. y M. L. provincia de Guipúzcoa compuesto por el Doctor Lope Martinez de Ysasti prebistero beneficiado de la Yglesia de San Juan Bautista del lugar de Lezo en Madrid año de 1625*. Biak ala biak argitaratu gabe iraun dute luzaz; aurrenekoak 1933an ikusi zuen argia lehen aldiz eta bigarrenak 1850ean.

Dagokigunerako, bigarrenari helduko diogu, gaztelaniaz idatzita egon arren euskarazko zenbait testu baitaude. Esan bezala, lehen aldikoz 1850ean argitaratu zen liburua Donostian, I. R. Barojarenean.

Argitalpenaren hitzaurrean aitortzen denez (1850: i), Rafael Floranesek (1743-1801) Gipuzkoako Diputazioari ustez originala zen eskuizkribua saldu zion 1781ean, eta Diputazioak Antonio Maria Zabalari eskatu zion ziurta zezala originala ote zen. Floranesen eskuizkribuaren bi kopia egin zituzten: bat, Floranesek hala eskatuta, berari emateko egin zen; aldiz, bestea Antonio Maria Zabalak egin zuen Diputazioari emateko, bertatik beste kopia bat atera zedin Aldundiaren artxiboan jasotzeko. Azkenean, 1782 ingururako originala eta Diputazioko kopia bat galduta zeuden. Beraz, Zabalaren beraren kopia baliatu zen 1850eko argitalpena egiteko (1850: iii-iv).

Gaur egun ez dugu Diputazioak 1850ean baliatu zuen kopia horren berririk. Dena dela, beste eskuizkribu batzuk ezagutzen ditugu. Mitxelenak (*TAV* 11. or.) bi aipatzen ditu. Bata Historiaren Errege Akademian dago (Mitxelenak B deitua) eta, beharbada, Madrilen dagoen ale hori da Floranesi bidalitako kopia. Izan ere, kopia horrek Rafael Floranesen eranskina dakar eta *con su vida y varios suplementos, notas y adiciones por Don Rafael Floranes Robles y Encinas, señor de Tabaneros* dio izenburuak

[441] Lehenago, *Orierriaga* (1071), *Orriaguiaga* (1253) eta *Oriarriaga* (1286) formekin ere lekukotzen da (Ibarra 1936: 272; *apud* Ciervide 1981: 283). Toponimoaren bilakaeraz xehetasun gehiagotarako, ik. *TAV* § 3.1.24 eta Belasko (2009).

gehigarri moduan. Mitxelenak Gipuzkoako Diputazioaren liburutegian dagoen beste eskuizkribu bat aipatzen du, baina ez du horren datarik jartzen; bere edizioko C eskuizkribua da. Guk ez dugu lortu testu hori lokalizatzea. Dena den, gaur egun Eusko Legebiltzarraren artxiboan[442] beste kopia bat dago, zeina Mitxelenak C testutzat hartzen duenarekin oso lotua dagoen. Artxiboko katalogazioaren arabera, XVII. mendekoa da; edonola ere, aski da eskuizkribuaren jatorrizkoa begiratzea azken orriko urmarkan 1802 jartzen duela ikusteko:



**1. irudia**

Legebiltzarreko Artxiboan dagoen Isastiren eskuizkribuaren kopiaren ur-marka

Hau horretarako lekua ez den arren, merezi du Legebiltzarrekoaren (L deituko diogu) eta Cren arteko konparaketa txiki bat egitea. Esate baterako, salbean Ln eta Cn *degu* eta *near* ditugu, besteetako *dugu* eta *negar*-en ordez; eta bietan da *arraden* besteetako *garaden*-en lekuan. Bestalde, Fn eta Gn *deño* dena, *danean* da Ln eta Cn, bigarren errefrauan; 39. errefrauan *mingañac* dago Cn eta Ln, besteetako *miac*-en ordez. Areago, 34. errefraua —*Esqueac solasa galdu*—, Cn *Escaceac, etsaicea* da Mitxelenak dakarrenez, eta Ln *Escaezea etsaicea* dago. Bestalde, 33. errefrauan —*Errota onari bia*— Ck eta Lk hutsa partekatzen dute: Ln *errotac on arri abia* eta Cn *Errota on arriabia*. Ikusteko dago huts poligenetikoa ala monogenetikoa den, baina, L eta C besteetatik bereizten dituzten gainerako ezaugarriak kontuan hartuta, oso gertuko bi bertsio direlakoan gaude.

[442] <http://www.liburuklik.euskadi.net/handle/10771/8587>.

Horrezaz gain, beste eskuizkribu bat aurkitu dugu Sancho El Sabio fundazioaren *Memoria Digital* funtsean.[443] Eskuizkribu horren urte zehatzik ez badakigu ere, babes-orrietako batean *La librería Aldazabal y Murguia en Deva, año 1783* jartzen du, eta amaierako beste babes-orri batean ere gauza bera jartzen du, baina 1784 urtearekin eta beste esku batek idatzia; beraz, urte horien ingurukoa dela dirudi. Beste babes-orri batean Gipuzkoako armarria dago. Urtea eta armarria kontuan izanda, kopia hori izan daiteke Aldundiak galdutzat jo zuen horietako bat. Bestalde, dirudienez, badago beste kopia eskuizkribatu bat ere, 1814koa; Jose Lasurtegik egin zuen eta egun Legebiltzarraren funtsean dago.[444] Espainiako Biblioteka Nazionalean badago beste kopia bat, XVIII. mendekoa, baina hor ez dago euskarazko errefraurik, salberik eta zortzikorik. Orain arte ezagutzen diren kopiak eta bertako euskarazko pasarteen ezaugarriak kontuan izanda, honelako stemma proposa dezakezu:[445]




**2. irudia**

Isastiren eskuizkribuaren kopien stemma

Ezagun denez, Isastiren liburuak Gipuzkoaren historia kontatzen badu ere, lehen liburuko hamahirugarren kapituluari «De la lengua Cántabra bascongada, de su antigüedad y elegancia» izena eman eta euskararen apologia egiten du bertan. Hori dela

443 <http://www.memoriadigitalvasca.es/handle/10357/1934>.

444 <http://www.liburuklik.euskadi.net/handle/10771/9274>; dena den, lotura horretako irudietako batzuk ez dira Isastiren *Compendio*-ren kopiak, baina beste batzuk bai; halere, euskarazko zatiak leudekeen orrialdeak falta dira.

445 Stemma hau lehenengoz “Monumenta Linguae Vasconum” proiektuaren 5. jardunaldietan proposatu nuen 2017ko abenduan, eta saio hartan aurkeztu nituen kopiek elkarren artean dituzten antzekotasun eta desberdintasunak. Leku faltagatik, hemen ez da sartzen konparaketa, baina orduko aurkezpena sarean dago: https://www.ehu.eus/documents/6174861/8944165/MLV5+Reguero.pdf/edf65c8f-e2d0-2178-a711-7b53ac20ffd9

eta, euskarazko zenbait testu biltzen ditu Isastik: salbea (§ 2.2.19.1), Sueskunen bertso bat (§ 2.2.19.2) eta errefrauak (§ 2.2.19.3). Hiru testu horiek goi-nafarrerazkoak dirudite, edo bertan agertzen diren ezaugarriak erdialde-ekialdekoak dira. Edonola ere, badira goi-nafarrerazkoak ez diren beste testu batzuk ere, hala nola Etxepareren «Doctrina Christiana» olerkiko pasarte bat sartzen du euskarazko liburu argitaratuez diharduela. Siculok jasotako zenbakien zerrenda ere ematen du, baita euskarazko sasi-etimologia batzuk ere. Horiekin batera, esaldi batzuk dakartza, Karlos V.a erregeak Nafarroako mandazain batekin izandako ustezko elkarrizketa batetik atereak (§ 2.2.19.4). Kapitulu horretatik landa, beste batzuetan badira euskarazko lekukotasun gehiago; esaterako, Beotibarko kantua (*TAV* § 3.1.1), Juan Lazkanoren kantua (*TAV* § 3.1.12) edo Xanfarronena (*TAV* § 3.1.16). Azken horiek ez ditugu gure corpusean sartu, batetik, ez dakigulako non jasoak izan ziren eta, bestetik, ez dutelako goi-nafarrerazkotzat hartzeko balio duten ezaugarririk —gainera, Lazkanorenak *jaquingo* dauka, ez *jaquinen*—.

Gipuzkoako Aldundiak 1850ean egindako edizioaren ondoren, Mitxelenak *Textos arcaicos vascos* bilduman jaso zituen lekukotasun horiek. Horretarako, 1850eko argitalpenean (A) oinarritu zen, baina Madrilgo eskuizkribua (B) eta Gipuzkoako Diputazioko alea (C) baliatu zituen edizioa osatzeko.

Zalantzarik gabe, beharrezkoa da ezagutzen diren kopia guztiak erkatu eta Isastiren euskarazko testuen azterketa eta konparaketa bat egitea. Halere, honako saio honetan edizio kritikoa dakargu, hizkuntzaren azterketarekin, eta horretarako Madrilen dagoen Floranesen kopia hartu da oinarri (F), baina 1850eko argitalpena (G), Legebiltzarreko (L) eta Sancho El Sabiokoa (S) kopiak ere erabili dira.

### *2.2.19.1. Salbea*

Isastik dakarren testuetako bat euskarazko salbea da. Dotrinetan ohikoa izaten ohi da otoitz hau. Goi-nafarrerazko salbe ezagun zaharrena Aresoko XVI. mende akabukoa da (§ 4.2.2.1), eta Isastirena genuke bigarren salbe ezagun zaharrena. Horren ondotik dator Beriainen dotrinan agertzen dena. Hirurak otoitz bera izan arren, aldaera desberdinak dira. Isastik, beharbada, orduan erabiltzen zen dotrinetako batetik atera zuen, baina ez dakigu nondik.

#### *2.2.19.1.1. Testua*

<193v> Salbe,[446] Regina,[447] Ama misericordiazcoa, vicitza,[448] eztitasuna,[449] esperanza gurea, salbe.[450] Zure[451] deyez[452] gaude Evaren hume desterratuoc.[453] Zu-

[446] Salbe] F *salbe* : G L S *salve*.
[447] regina] F G *regina* : L *ERegina* : S *ErRegiña*.
[448] vicitza] F G *vicitza* : L S *viciza*.
[449] eztitasuna] F G S *eztitasuna* : L *eztítasuna*.
[450] salbe] F *Salbe* : G L S *Salve*.
[451] Zure] F G S *Zure* : L *zuri*.
[452] deyez] F G *deyez* : L *deíez* : S *deiez*.
[453] desterratuoc] F G *desterratuoc* : L S *desterratuac*.

gana zuspiratzen[454] dugu[455] laiduz eta negarrez,[456] negar[457] ibarr onetan,[458] malcozco arane[459] onetan. Ea, bada, gure abogada,[460] zure begui urricarizti[461] oriec iraulitzazu[462] gugana, eta Jesus bedeicatua, zure sabeleco[463] frutua,[464] gure[465] desterru[466] au ezquero, eracuzquzu.[467] O, bioz[468] vera![469] O, pietatetsua![470] O, ezti[471] virgina[472] Maria! Erregu ezazu gugatic, Jaungoicoaren ama santa,[473] diñu[474] garaden[475] Christoren prometimentuen. Amen. Ala biz.[476]

### *2.2.19.1.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, batzuetan afrikatuak bereizten dira: *vicitza*, *pietatetsua*; baina ez beti: *zuzpiracen*, *izazu*, *bioz*. Bestalde, *u*-ren aurretik <h> erabiltzen da hitz hasieran: *hume*.

Morfologiari dagokionez, instrumentalean aldaera bizkarkaria agertzen da beti: *deyez*, *laiduz*, *negarrez*. Aditzetan, **edun* aditzaren oraineko erroa *-u-* da: *dugu*. Aldiz, *izan* aditzaren pluraleko lehen pertsonan *garaden* pleonastikoa dago; eta, ikus daitekeenez, adizki hori subjuntibo trinkoa da. Bestalde, indikatibotik landako formetan aditzoina mantentzen da *-tu-*z amaitzen diren aditzekin; aldiz, partizipioa erabiltzen da *-i-*dunekin: *erregu ezazu*, baina batera idatzia dagoenez, zalantza dago *iraulizatzu* adibidean. Horrezaz landa, *eracusquzu* ere badakar.

Sintaxian, *ezti virgina Maria* adibidean adjektiboa izenaren ezkerren agertzen da; eta hiperbatona dugu *diñu garaden Christoren prometimentuen* adibidean.

Lexiko aldetik, *urricarizti* agertzen da; hitzaren lekukotasun bakarra dela dirudi. Testu nafarretan ez dugu gehiagotan aurkitu eta *OEH*n jasotzen den adibide bakarra Isastirena da. Bestalde, Isasti bakarra da *arane* 'haran' aldaera erabiltzen duena. Mitxelenak (*TAV* § 3.2.12) ohartarazten duenez, ez da hutsa, Isastiren eskuizkribuan bertan pasartu hau dagoelako: «*aramburu* se llama la casa de la cabeza del valle, porque *aranea* significa valle y *burua* cabeza». *OEH*n (s.v. *haran*) *aranean*, *aranetik* eta

---

454 zuspiratzen] F *zuspiratzen* : G *suspiratcen* : L *zuzpiracen* : S *zuzpirazen*.
455 dugu] F G *dugu* : L S *degu*.
456 negarrez] F G L *negarrez* : S *nigarrez*.
457 negar] F *negar* : L S *near*.
458 negar ybarr onetan] Gn falta da.
459 arane] F G *arane* : L S *orañe*.
460 gure abogada] Ln eta Sn falta da.
461 urricarizti] F S *urricarizti* : G *urricaristi* : L *urricarízti*.
462 iraulitzazu] F *iraulytzazu* : G *iraulitzazu* : L *ízuli izatzu* : S *irauli izatzu*.
463 sabeleco] F G L *sabeleco* : S *saveleco*.
464 frutua] F L S *frutua* : G *fructua*.
465 gure] F G *gure* : L *gurí* : S *guri*. Dena dela, Fn ez dara ziur azken letre <e> den.
466 desterru] F *desterru* : G *desterro* : L *deztierro* : S *destierro*.
467 eracuzquzu] F *eracuzquzu* : G L S *eracuscuzu*.
468 bioz] F G S *bioz* : L *biotz*.
469 vera] F *vera* : G *bera* : L *veroa* : S *beroa*.
470 pietatetsua] F G *pietatetsua* : L S *piedadesua*.
471 ezti] F G *ezti* : L S *esti*.
472 virgina] F *virgina* : G *Virjiña* : L *birgina* : S *Virgina*.
473 santa] Gn, Ln eta Sn falta da.
474 diñu] F G *diñu* : L S *dinu*.
475 garaden] F G *garaden* : L S *arraden*.
476 biz] F G *biz* : L S *viz*.

antzeko formetatik egindako berranalisitzat hartzen da. Azkenik, *laidu* 'intziri' hapaxa dugu.

### *2.2.19.2. Miguel Sueskunen zortziduna*

Isastik jasotzen duen euskarazko beste testuetako bat da Miguel Sueskunen zortziko hau, «una octava muy sentida» haren hitzetan. Mitxelenak (*TAV* § 3.1.19) adierazi bezala, ez dakigu Miguel Sueskun nor izan zen; lizentziatua zela eta abizenagatik eta hizkeragatik nafarra izan zitekeela baizik ez dakigu. Bertsoaren sortzailea baino, itzultzailea izan zela esan daiteke, jatorrizkoa gaztelaniazko bertsioa baita; Frai Pedro de los Reyesek osatutako zortziko erreal ezaguna da (*ibid.*).

Gaztelaniazkoak hamaika silabako zortzi bertso-lerro ditu. Bosgarren lerrora arte, bakoitiek egiten dute errima, ondotik azken bi lerroek beste errima bat dute. Euskarazkoak ere 8 lerro ditu, baina 12 silabakoak dira, «admitidas algunas licencias» (*ibid.*).

#### *2.2.19.2.1. Testua*

<193v> **Octavas en bascuence y romance**

Ni certaco[477] jayo[478] ninzan? Salva nendin.
Hil[479] bear baituquet[480] nic? Guertu date.[481]
Jaincoa[482] ez nezan icus,[483] condena al nendin,[484]
gauza tristea lizate; ordea, badate.
Badate,[485] eta[486] farra, loh[487] eta josta nendin?
Badate, eta[488] icusi alas nai al naite?
Cer ari naiz? Certan nabil? Arritu al naiz?
Heratu[489] ni bide naiz, santu ezpainaiz[490].

Yo para qué naci? para salbarme;
que tengo de morir, es infalible;
Dejar de ver a Dios, y condenarme,
triste cosa será, pero posible.
¡Posible! ¿Y río, y duermo, y quiero holgarme?
¡Posible! ¿Y amo y quiero lo visible?
¿Que hago? ¿En qué me ocupo? ¿En que me encanto?
¡Loco debo de ser, pues no soy santo!

---

477 certaco] F G L *certaco* : S *zertaco*.
478 jayo] F *jayo* : G *jayoninzan* : L *gaio* : S *Jaio*.
479 Hil] F *hil* : G *il* : L S *Yll*.
480 baituquet] F L S *baituquet* : G *baitiquet*.
481 Guertu date] F *guertu date* : G L S *Bai guertu date*.
482 Jaincoa] F G *Jaincoa* : L S *Jaincoac*.
483 icus] F *icus* : G *icuz* : L S *izuz*.
484 nendin] F G *nendin* : L S *nindin*.
485 Badate] F G *badate* : L S *vadate*.
486 eta] F G *eta* : L S *esta*.
487 loh] F G *loh* : L *ló* : S *lo*.
488 eta] F G *eta* : L S *esta*.
489 Heratu] F *Heratu* : G *Eratu* : L *erotu* : S *eratu*.
490 ezpainaiz] F G *ezpainaiz* : L S *ezpanaiz*.

### *2.2.19.2.2. Iruzkina*

Grafiaz den bezainbatez, aipagarri da Fk duen, baina besteek ez duten <h>: *Hil* (2) eta *Heratu* (8). Ez dirudi hasperena islatzen duenik.

Fonologia aldetik, F eta Gk *jayo* (1) aditzean hots belarra dagoen edo sabaikaria dagoen ezin dugu jakin, baina Lko <g> grafemak iradoki dezake **j-* zaharraren ahoskera sabaikaria dela: *gayo* (1). Fonologiarekin amaitzeko, F eta Gko *loh* eta Lko *ló* grafiek iradoki dezakete bokala luzea dela.

Morfologian, instrumentalean apikaria dagoela dirudi: *alas* (6). Aditz morfologiari dagokionez, geroaldi trinko zaharra agertzen da: *badate* (4, 5, 6). *Izan* aditzaren iraganeko marka *-an* da: *ninzan* (1). Indikatiboaz landako formetan aditzoina erabiltzen da: *salva nendin* (1) *ez nezan icus* (3), *josta nendin* (5). **Edin* aditzaren adizkietan *a-i* > *e-i* egin da Fn eta Gn: *nendin* (1, 3, 5). Aldiz, kasu batean *i-i* dago Ln: *nindin* (3).

Sintaxiaz den bezainbatez, galderetan zalantza adierazteko *al* partikula erabiltzen da: *Arritu al naiz?* (7). *OEH*n (s.v. *ahal*; 2. adiera), agerraldi hau jasotzen da; esaten denez, Iparraldeko testuetan gehiago lekukotzen da, eta Hegoaldean, batez ere, testu zaharretan edo xx. mendetik aurrera.

Lexiko aldetik, azpimarratzekoa da *santu* (8) aldaera erabiltzen dela, ez *sandu* nafarra. Bestalde, Mitxelenak (*TAV* § 3.1.19) ohartarazi bezala, *nai* (6) aditzaren lehen agerraldia da, 'maitatu' adierarekin (edonola ere, 1626ko Orreagako esaldi batean ere *nahi* 'maitatu' adieran lekukotzen da; ik. § 2.2.8.31.2). Gainera, aditz horrek laguntzaile iragangaitza du —*naite*— eta objektua instrumentalean —*icusi alas*—. Hori dela eta, Mitxelenak dio aditz laguntzaile iragangaitza duela.

### *2.2.19.3. Errefrauak*

Arestian esan bezala, Isastik dakartzan euskarazko lekukotasunen artean errefrauak bildu zituen; orotara euskarazko 86 errefrau dira, alfabetikoki ordenaturik eta ondoan gaztelaniazko itzulpena dutela.

Bilduma hau garaiko interes eta mugimenduetan kokatu behar dela dirudi. Lakarrak (1996: xv) laburbiltzen du Espainiako egoera:

> Ezagun denez, humanista espainiar anitz Hernán Núñez-engandik (1555) Correasganaino (1627) Pedro Vallés (1549) edo Juan de Mal Lara (1568) barne tarroenak baino ez aipatzearren, esaera eta errefrauak biltzen eta iruzkintzen aritu ziren. Jakintsuen idazlanekiko begirune eta zaletasunaz landa, herritar txiroen filosofia sakonarekikoa eta herri-artearen sorkuntza «natural» eta «berezko»ekiko jaiera erideiten ahal da beraiengan (Chevalier 1979: 105). Dirudienez, Espainian sentimendu hau beste inon baino hedatuagoa zen: ez Frantziakoa, ez Italiakoa ez beste Europako lurraldetakoa pareka ahal liteke bere zabaltasun eta sakontasunean espainiarrek xv. mendearen akabuaz geroztik herri lirika, balada (*romancero*) eta errefrauez erakutsi interesarekin.

Euskal Herria ez zen humanisten mugimendu horretatik landa gelditu eta euskarazko errefrauak jasotzen dituzten bilduma batzuk badira (Lakarra 1996: xvi):

1. Garibairenak.
2. *Refranes y sentencias en bascuence* bilduma anonimoa.
3. Zalgizek osatutakoa.
4. Belak egindakoa.
5. Oihenartenak.
6. Isastik berak bildutakoa.

Lakarrak dioenaren ildotik, errefrauak dira XVI. mende akabuko eta XVII. mende hasierako literatur molde nagusietakoak, eta azpimarratzen du kronologikoki gaztelaniazko errefrauen urrezko aroarekin bat egiten duela eta euskal eremu ia osoa hartzen dutela (1996: xvi-xvii). Hauek dira goi-nafarrerazkoak liratekeen errefrau zahar bakarrak. Euskarazkoekin batera, gaztelaniazkoak ere jaso ditugu, baina F bertsioan daudenak bakarrik eman ditugu. Errefrauak zerrendaturik eman ditugu, Mitxelenak egin bezala.

*2.2.19.3.1. Testua*

<193v> **Proverbios en bascuence por abecedario**

1. Aytzean[491] jaioac[492] aitzera[493] nai.[494]
El nacido en la peña quiere volver a la peña.

<194r> 2. Agoac[495] bero deño[496] galda.[497]
La masa mientras es caliente tiene calda.

3. La hija mal casada a la casa buelve.
Alaba[498] gaizqui ezcondua ichera[499] biur.

4. Alferric necatu[500] baño[501] obe da gueldiric[502] egon.
Más vale estar quedo que travajar en vano.

5. Amorezco ezconcea,[503] doloresco[504] vicitzea.[505]
Por amores casamiento, con dolor el vivir.

6. Amuarraya[506] amutic eta[507] anzumea[508] larrutic.
La trucha del anzuelo (fresca) y el cabrito del pellejo.

7. Aritz[509] eroriari oroc[510] egur.[511]
Al roble caído cualquiera quita la leña.

8. Artu-emanac du gustua.[512]
El recibir y el dar tienen el gusto.

---

491 Aytcean] F *Aytcean* : G *Aitzean* : L *Aicean* : S Aizean.
492 jaioac] F L S *jaioac* : G *jaiac*.
493 aitzera] F *aitzera* : G *aizera* : L *Aicera* : S *Aizera*.
494 Fk eta Lk gaztelaniazko bi ordain dituzte; Fn datorrena eta ondoko hau: *la baca de Gorbea desea siempre a Gorbea*. Gk errefrau berbera du, baina *Gorbeia* dakar.
495 Agoac] F G S *Agoac* : L *Agoa*.
496 deño] F G *deño* : L S *danean*.
497 galda] F G S *galda* : L *calda*.
498 Alaba] F G L *Alaba* : S *Alava*.
499 ichera] F *ychera* : G *ichera* : L *echara* : S *echera*.
500 necatu] F G L *necatu* : S *nicatu*.
501 baño] F *bano* : G L S *baño*.
502 gueldiric] F G *gueldiric* : L S *galduric*.
503 ezconcea] F *ezconcea* : G *esconcea* : L S *ezcontza*.
504 doloresco] F *doloresco* : G L S *dolorezco*.
505 vicitzea] F *vicitzea* : G *vicitcea* : L *viciza* : S *bicitza*.
506 Amuarraya] F *Amuarraya* : G *Amuarraia* : L *Amuarrai* : S *Amu arraia*.
507 eta] Ln eta Sn ez dago juntagailua.
508 anzumea] F L S *anzumea* : G *arcumea*.
509 Aritz] F G *aritz* : L S *ariz*.
510 oroc] F G *oroc* : L S *oroz*.
511 egur] F G L *egur* : S *agur*.
512 gustua] F *gustua* : G L S *gustoa*.

9. Asco daqui zarrac, eracusi bearrac.[513]
Mucho sabe el viejo, enseñole el menester
10. Atean usso,[514] itchean[515] osso.[516] Ala[517] vicicaria[518] gaisto.[519]
De fuera paloma, y en casa lobo: assí vivir es malo.
11. Auqueraren[520] mauquera, azquenean oquerra.
A mucho escoger, a la postrera tuerto.
<194v> 12. Balizco olaac[521] burnia[522] guchi.
El decir «si tubiera herrería» trae poco fierro.
13. Batec milla valio[523] eta[524] millac bat ere ez.[525]
Uno vale mil, y mil no nada.
14. Bearguille[526] gaiztoa,[527] eracusle on.
El que no quiere trabajar es buen enseñador.
15. De la obra huir a Castro, allá también harto trabajo.
Bear iguesi Castrora, an ere bearric asco da.[528]
16. Beguiac buruan sabioac, eta eroac oñetan.[529]
Los ojos en la cabeza el sabio, y el loco en los pies.
17. Beyac[530] on du larrea, obeago[531] jabea.
Al buey es bueno el campo, pero mejor el dueño. ¿Quién cría al caballo? [El ojo de su amo.
18. Bustana[532] lastoscoa[533] duena[534] suaren bildur.
La cola de paja quien tiene del fuego teme.
19. Zayetan[535] zur eta iriñetan[536] ero.[537]
En los salbados cuerdo, y en las arinas loco.

---

[513] eracusi bearrac] F *eracusi bearrac* : G *eracutsi bearrac* : L S *bearrac eracusi*.
[514] usso] F G *usso* : L S *uso*.
[515] itchean] F *ytchean* : G *ichean* : L S *echean*.
[516] osso] F *osso* : G *otso* : L S *oso*.
[517] Ala] F L S *ala* : G *ála*.
[518] vicicaria] F G *vicicaria* : L *vici* : S *bizi*.
[519] gaisto] F *gaisto* : G *gaixto* : L S *gaizto*.
[520] Auqueraren] F G *Auqueraren* : L S *Auqueran*.
[521] olaac] F G *olaac* : L S *olac*.
[522] burnia] F G L *burnia* : S *burni*.
[523] valio] F G *valio* : L S *balio*.
[524] eta] F G *eta* : L S *ta*.
[525] bat ere ez] F *bat ere ez* : G *batere ez* : L S *baterez*.
[526] Bearguille] F G S *Bearguille* : L *Bearguile*.
[527] gaiztoa] F G S *gaiztoa* : L *gaiztua*.
[528] asco da] Ln eta Sn ez dago.
[529] Fn errefrau hau hurrengoaren ondoren dator; Gn eta Ln, ordea, hurrenkera alfabetikoa mantentzen da. Guk ere hala egin dugu.
[530] Beyac] F *Beyac* : G L S *Beiac*.
[531] obeago] F G *obeago* : L S *obe du*.
[532] Bustana] F G L *Bustana* : S *Buztana*.
[533] lastoscoa] F *lastoscoa* : G L S *lastozcoa*.
[534] duena] F G *duena* : L S *duana*.
[535] Zayetan] F *Zayetan* : G *Çayetan* : L S *Zaietan*.
[536] iriñetan] F *yriñetan* : G *iriñetan* : L *irinetan* : S *ireñetan*.
[537] ero] Fn falta da. Lk ez du gaztelaniazko ordaina; horren ordez euskarazkoa dator berriro.

20. Cartari carta eta burniari dirua.
A la carta carta, y al fierro dinero.
21. Chindurriari daquitzanean[538] egoac, galdu oi ditu gorputza[539] ta besoac.
A la hormiga cuando le nacen las alas, perder suele el cuerpo y los brazos.
<195r> 22. Zura[540] beraago,[541] arra barrenago.
La madera cuanto más blanda, el gusano más adentro.
23. Daquienac[542] lan daidi, eztaquienac[543] ler[544] daidi.
El que sabe obra hará, y el que no sabe puede rebentar.
24. Darrayonarenzat[545] da iizia.[546]
Para el que sigue es la caza.
25. Diru[547] gabeco[548] andirasuna,[549] su bagueric[550] bersuna.
Sin dinero grandeza, es como el badil sin fuego.
26. Eci[551] eguiña[552] arria baño gogorrago. Arriari maluaz[553] ere baledeco.
El no poder, más duro que la piedra: a la piedra se puede quitar con el [martillo.
27. Egoqui arzari beloa seda.[554]
¡Que bien está al osso el belo de seda! Como si digera: las armas de Saúl [no vienen bien a David.
28. Eguic[555] on eta[556] eztaquiala[557] non.[558]
Haz bien, y no sepas a quién.
29. Eguioc eguilleari[559] eta[560] emaioc[561] emalliari.[562]
Haz al hacedor, y da al dador.

---

538 daquitzanean] F G *daquitzanean* : L S *daquizanean*.
539 gorputza] F G *gorputza* : L S *gorpuza*.
540 Zura] F L *Zura* : G *Çura*.
541 beraago] F G L *beraago* : S *bereago*.
542 daquienac] F G S *daquienac* : L *daquenac.*
543 eztaquienac] F *eztaquienac* : G *ezdaquienac* : L S *ta eztaquienac*.
544 ler] F G S *ler* : L *lar*.
545 Darrayonarenzat] F G *Darrayonarentzat* : L *daraiconarenzat* : S *Darraiconarenzat*.
546 iizia] F *Yizia* : G *eicia* : L *eizia* : S *Yzia*.
547 Diru] F G S *Diru* : L *Dirau*.
548 gabeco] F S *gabeco* : G *bagueco* : L *gaveco*.
549 andirasuna] F *andirasuna* : G L S *anditasuna*.
550 bagueric] F G S *bagueric* : L *bageric*.
551 Eci] F G *eci* : L *ecin* : S *Ezin*.
552 eguiña] F G S *eguiña* : L *eguina*.
553 maluaz] F *maluaz* : G *malluaz* : L *malloac* : S *malluac*.
554 beloa seda] F *beloa seda* : G L S *seda beloa*.
555 Eguic] F *Eguic* : L S *Eguin*. Gn errefraua falta da.
556 eta] Ln eta Sn falta da.
557 eztaquiala] F S *eztaquiala* : L *etaquiela.*
558 non] F *non* : L S *nori*.
559 eguilleari] F G *eguilleari* : L *eguileari* : S *eguilliari*.
560 eta] Ln eta Sn falta da.
561 emaioc] F L S *emaioc* : G *emago*.
562 emalliari] F G S *emalliari* : L *emaliari*.

30. Eliza[563] ceguienac[564] aldarea, aldaria[565] ceguienac[566] abbadea.[567]
El que hizo la iglesia, el altar, y el que hizo el altar, al abad.
31. Erle joanac[568] eztiric[569] ez.
La abeja ida, la miel perdida.
<195v> 32. Erric bere legue, itcheac[570] bere[571] aztura.
Cada tierra su ley, cada casa su costumbre. En cada villa, su maravilla.
33. Errota onari bia.[572]
Al molino bueno, la molienda.
34. Esqueac[573] solasa[574] galdu.
El pedir pierde la conversación.
35. Faquea[575] ezta[576] dirus[577] erocia.[578]
La paz no es comprada por dineros.
36. Gauza gordia,[579] urre gorri.[580]
La cosa guardada, oro rojo.
37. Gauza zarra, bera[581] lar.
La cosa vieja ella misma es çarza que tira.
38. Gaizqui jan ta[582] gaizqui lan.
Mal comer y mal obrar.
39. Gogoa miac[583] salatu.
Al pensamiento la lengua descubrió.
40. Gorrac itz[584] gaitzari[585] leya.[586]
El sordo a la palabra mala porfía.

---

563 Eliza] F G L *Eliza* : S *Eleiza*.
564 ceguienac] F G L *ceguienac* : S *zeguienac*.
565 aldaria] F *aldaria* : G L S *aldarea*.
566 ceguienac] F G L *ceguienac* : S *zeguienac*.
567 abbadea] F *abbadea* : G L S *abadea*.
568 joanac] F G *joanac* : L *juana* : S *Juanac*.
569 eztiric] F G S *eztiric* : L *estiric*.
570 itcheac] F *ytcheac* : G *icheac* : L S *echeac*.
571 bere] F G S *bere* : L *vere*.
572 Ln eta Sn *errotac on arri abia* dator. Kopiatzean egindako interpretazio edo irakurketa hutsa izateko itxura du.
573 Ln eta Sn beste errefrau bat dago: *escaezea etsaicea / etsaizea*.
574 solasa] F *solasa* : G *solatza*.
575 Faquea] F G *Faquea* : L S *Paquea*.
576 ezta] F G *ezta* : L *esta* : S *eztá*.
577 dirus] F *dirus* : G L S *diruz*.
578 erocia] F *erocia* : G *eroziya* : L S *erosten*.
579 gordia] F *gordia* : G S *gordea*: L *gorde*.
580 gorri] F G *gorri* : L S *gorria*.
581 bera] F G *bera* : L S *vera*.
582 ta] F G S *ta* : L *eta*.
583 miac] F G *miac* : L S *mingañac*.
584 itz] F G *itz* : L S *iz*.
585 gaitzari] F *gaitzari* : G L S *gaizari*.
586 leya] F *leya* : G L S *leia*.

41. Goiz gorri, euri daidi.[587] Arrats[588] gorri, eguraldi.
Arreboles de mañana, aguas; y arreboles de la tarde buen tiempo.
42. Gorrotoa[589] billau[590] uts.
El despecho, villana cosa.
43. Guero dionac[591] bego dio.
El que dice «después», dice que se quede.
44. Guezurra[592] nenzan[593] Guetarian, ni ichean[594] eta[595] ura[596] atarian.
Mentira dige en Guetaria, yo en casa y ella a la puerta.
<196r> 45. Guibeleco on dena[597] bareco gaizto.[598]
Para el higado lo que es bueno, para el bazo es malo.
46. Gure zayoc[599] iriñ[600] esque.
Nuestros salvados arina piden.
47. Izan baguea, guerra.[601]
El no tener todo guerra.
48. Ichian[602] oguia ezin[603] jan eta[604] Arangurenen[605] artoa.
En casa el pan no poder comer, y en Araguren el mijo.
49. Idiac erausi bearrean,[606] gurdiac[607] inno.[608]
El buey havía de mugir, y el carro gruñe.
50. Illac aguin zeguian,[609] biciac[610] bere naya.[611]
El muerto mandó, y el vivo hizo lo que quiso.
51. Illze ona, mercaduria.
El morir bueno, cosa de valor.

---

[587] daidi] F G L *daidi* : S *baidi*.
[588] Arrats] F *arrats* : G *arrate* : L *arras* : S *Arras*.
[589] Gorrotoa] F G S *Gorrotoa* : L *Gorrotua*.
[590] billau] F G *billau* : L S *villau*.
[591] dionac] F L S *dionac* : G *dioenac*.
[592] Guezurra] F G *Guezurra* : L S *Guizurra*.
[593] nenzan] F G L *nenzan* : S *nensan*.
[594] ichean] F *ychean* : G *ichean* : L S *echean*.
[595] eta] F *eta* : G L S *ta*.
[596] ura] F G L *ura* : S *hura*.
[597] dena] F G *dena* : L S *dana*.
[598] gaizto] F G *gaizto* : L *gaiztoa* : S *gaistoa*.
[599] zayoc] F G *zayoc* : L *zaiac* : S *zaioc*.
[600] iriñ] F *iriñ* : G L S *irin*.
[601] Gn *Yzan baguea guerra uts* dator, Ln *Ez izan guerra, utz echean* eta Sn *Ez yzan guerra, us echean*.
[602] Ichian] F *Ychian* : G *Ichian* : Ln eta Sn falta da.
[603] ezin] F L S *ezin* : G *ecin*.
[604] eta] F L S *eta* : G *ta*.
[605] Arangurenen] F L *Arangunen* : G *Arangurenen* : S *Araguren*.
[606] bearrean] F G S *bearrean* : L *bearrian*.
[607] gurdiac] F G S *gurdiac* : L *burdiac*.
[608] inno] F L S *ynno* : L *inno*.
[609] zeguian] F S *zeguian* : G L *ceguian*.
[610] biciac] F *bizia* : G *viciac* : L S *biciac*.
[611] naya] F G *naya* : L *nai* : S *naia*.

52. Illumbeco jostea, arguitaco lotsa.
En obscuras cosido, en la luz confundido.
53. Irabaciac[612] oñac arin.
El ganar, pies ligeros.
54. Itsasoco legueac onac on eta gaistoac[613] mesur gabeac.[614]
Las leyes de la mar, las buenas buenas, y las malas sin medida.
55. Itsuen[615] errian,[616] oquerroc[617] erregue.[618]
En tierra de ciegos, los tuertos reyes.
56. Lagunaren beyac,[619] erroa[620] luce.[621]
La baca del compañero, la ubre larga.
57. Larrutic edea.[622]
Del cuero la correa.
58. Len illa,[623] len oztu.[624]
El que primero muere, primero se entierra.
<196v> 59. Motel oro beti[625] iz nay.[626]
El tartamudo, amigo de hablar.
60. Nolaco elizalde, alaco abade.
Cuál la anteyglesia, tal el abbad.
61. Nolaco novia, alaco cabia.[627]
Cuál el nobio, tal el nido.
62. Nola soñu, ala danza.
Cómo el son, así la danza.
63. Nola tempora, ala solas.[628]
Cómo el tiempo, así la plática.
64. Nor bere temporaco, arbia abendoco.[629]
Cada cosa para su tiempo, y el navo para el adviento.

---

612 Irabaciac] F S *Yrabaciac* : G *Irabaciac* : L *Yrabaciaz.*
613 gaistoac] F *gaistoac* : G *gaiztoa* : Ln eta Sn errefraua falta da.
614 gabeac] F *gabeac* : G *bagueac* : Ln eta Sn errefraua falta da.
615 Itsuen] F *Ytsuen* : G *Itsuen* : L S *Ychuen*.
616 errian] F L S *errian* : G *erriyan*.
617 oquerroc] F G *oquerroc* : L *gorrac* : S *oquerrac*.
618 erregue] F G *erregue* : L *alcate* : S *Alcate*.
619 beyac] F G *beyac* : L *beiac* : S *Beiac*.
620 erroa] F G S *erroa* : L *errua*.
621 luce] F G L *luce* : S *luze*.
622 edea] F G S *edea* : L *erea*.
623 illa] F G S *illa* : L *ila*.
624 oztu] F G *oztu* : L S *aztu*.
625 Motel oro] F *Motel oro* : G *Moteloro beti* : L S *Motela beti*.
626 nay] F *nay* : G L S *nai*.
627 cabia] F G *cabia* : L *avia* : S *havia*.
628 solas] F *solas* : G *solaz* : L S *jolas*.
629 abendoco] F *abendoco* : G *Avendoco* : L *avenduco* : S *abenduraco*.

65. O, cer[630] celaya,[631] jana ezpalego.
¡O, qué campo, si no estubiese comido!
66. Odolac su gabe[632] diraqui.
La sangre sin fuego hierve.
67. Olaa olaguizonarenzat eta barca barca-maisuarenzat.[633]
La ferrería para el ferrón, y la nao para el maestro de ella.
68. Olatic berri onic ez.[634]
De la ferrería nunca cosa buena.
69. Oyan[635] orotan otsso[636] bana.
En cada bosque, su lobo.
70. Oncia galdu ezquero, guztioc[637] pillotu.
Perdida la nao, todos pilotos.
71. Oric[638] ezten[639] lecuan acearia[640] erregue.
Perros donde no hay, el raposo es rey.
72. Ororen[641] ardia, otzoac[642] jan.
Obeja de todos, cómenla lobos.
<197r> 73. Oquin berriac, baia[643] zuri.
El panadero nuebo, zedazo blanco.
74. Otzoa[644] aytalondoan. [645]
El lobo acabando la plática. *Lupus est in fabula.*
75. Otsoaren aotic[646] bocadu bat ere[647] on.
De la boca del lobo, un solo bocado es bueno.
76. Otsoa ardien zay.[648]
El lobo pastor de obejas.
77. Pagatzalle gaiztoagandic[649] olo
Del mal pagador avena.

---

630 cer] F G L *cer* : S *zer*.
631 celaya] F G *celaya* : L S *zelaia*.
632 gabe] F S *gabe* : G *bague* : L *gave*.
633 Ln eta Sn ez dago errefrau hau.
634 Ln eta Sn ez dago errefrau hau.
635 Oyan] F *oyan* : G *oian*. Ln eta Sn ez dago errefrau hau
636 otsso] F *otsso* : G *otso*.
637 guztioc] F G *guztioc* : L S *gucioc*.
638 Oric] F G S *Oric* : L *Oberic*.
639 ezten] F *ezten* : G *esten* : L S *eztan*.
640 acearia] F *acearia* : G *aceria* : L *Aiceria* : S *Azaria*.
641 Ororen] F G S *Ororen* : L *Inoren*.
642 otzoac] F *otzoac* : G S *otsoac*: L *otsuac*
643 baia] F L S *baia* : G *baya*.
644 Otzoa] F *Otzoa* : G *Otsoa*. Ln eta Sn beste errefrau hau dator: *Otsoa ataondoan enzucen platica / otsoa atal ondoan enzuten platica*.
645 aytal] F *aytal* : G *aital*.
646 aotic] F G *aotic* : L *autic* : S *abotic*.
647 bat ere] F G *bat ere* : L S *bat*.
648 zay] F *zay* : G L S *zai*.
649 gaiztoagandic] F *gaiztoagandic* : G *gaiztoaganic*. Ln eta Sn ez dator errefrau hau.

78. Salzen[650] dabillena galcen dabill.
El que anda a vender, anda a perder.
79. Suguea[651] illagatic,[652] suguecumea[653] bici.[654]
La culebra aunque muera, la culebrilla que de ella nació vibe.
80. Trabajua[655] mañac garay.[656]
Más vale maña que fuerzas.
81. Unayac[657] arutz citean[658] gastac[659] aguer citean.
Los baqueros riñieron, y los quesos parecieron. Riñieron las comadres, y [descubrieron las verdades.
82. Urte gaiztoa,[660] oquin uts.[661]
El mal año todo es panaderia.
83. Urrutico berria,[662] lenena[663] eguia.
Las malas nuebas, las primeras.
84. Ur joanari[664] presaric eguiñ[665] ez.
A la agua bertida no se hace presa.
<197v> 85. Urtara maiz dijoan[666] jarroa,[667] laster da autzi.[668]
El jarro que va a menudo a la agua, presto es quebrado.
86. Usoac juan ta[669] sareac gora.
Idas las palomas, las redes se llebantan. Ido el conejo, el necio toma el [consejo.

---

650 Salzen] F *Salzen* : L *Salcen*. Ln *Davilena salcen, davil galcen* dator; Sn *Davillena salzen davil galcen*.
651 Suguea] F G *suguea* : L *sugea*.
652 illagatic] F *illagaistic* : G L S *illagatic*.
653 suguecumea] F *suguecumea* : G *sugacumeac* : L *suge umea* : S *sugueco humeac*.
654 bici] F *bici* : G L *vici* : S *bizi*.
655 Trabajua] F G L *Trabajua* : S *Trauajua*.
656 garay] F L *garay* : G S *garai*.
657 Unayac] F G *Unayac* : L S *Vnaiac*.
658 arutz citean] F *arutz citean* : G *arritz citean* : L S *aserracean*.
659 gastac] F *gastac* : G *gaztaac* : L *gasteac* : S *gaztac*.
660 gaiztoa] F G S *gaiztoa* : L *gaiztua*.
661 uts] F *uts* : G *ots* : L S *urte*.
662 berria] F G *berria* : L *verrea* : S *verria*.
663 lenena] F L *lenena* : G *leenena*.
664 joanari] F G *joanari* : L S *juanari*.
665 eguiñ] F *eguiñ* : G L S *eguin*.
666 dijoan] F G S *dijoan* : L *dijuan*.
667 jarro] F G *jarroa* : L S *jarro*.
668 autzi] F *autzi* : G *autsi* : L S *ausia*.
669 juan ta] F S *juanta* : G *joanda* : L *juanda*.

*2.2.19.3.2. Iruzkina*

Grafian batzuetan txistukari afrikatuak bereizten dira, baina ez sistematikoki; esaterako, *Aytzean*, *aitzera* (1), *vicitzea* (5), *arrats* (41), *uts* (42), baina *eracusi* (9). Aitzitik ozen ondotik ez da afrikatua markatzen: *ezconcea* (5), *anzumea* (6).

Fonologiaz den bezainbatez, hasperena galtzeak eragindako hiatoa saiheste aldera, *-g-* erantsi da: *Agoa* (2), *iguesi* (15); halere, behin *aotic* (75) agertzen da. Badirudi, bokal bikoitzak ez direla erabat soildu; hori dela eta, *olaac* (12), *beraago* (22), *olaa* (66) ditugu. Bestalde, *e-* > *i-* bokal ixtea gertatu da *etxe* hitzean ondoko sabaikariaren eraginez: *ichera* (3), *itchean* (10) *itcheac* (32). Sistematikoki agertzen ez bada ere, bokaletan *oa* > *ua* bilakabidea gertatzen dela ikus dezakegu adibide batzuetan: *gustua* (8), *Travajua* (80), *juan* (86), baina errefrau berean *usoac* dago. Inoizko **-ani* > *-ai* egin da: *amuarraya* (6). Inoiz, txistukarien neutralizazioaren adibide batzuk aurki daitezke: *lastoscoa* (18). Hori dela eta, kasu batzuetan hiperzuzenketak egon daitezke: *erocia* (35), *nenzan* (44), *otzoac* (73), *otzoa* (75). Azkenik, asimilaziozko sabaikaritzea dago, baita kontsonante aurrean eta hitz amaieran ere: *pagatzalle* (78), *illagatic* (80), *eguiñ* (85).

Izen morfologiari dagokionez, artikuluaren erabilera falta nabarmena da kasu batzuetan: *on du* (17), *Erric bere legue* (32), *on dena* (45). Behin, instrumentalean apikaria agertzen da: *dirus* (35). Destinatiboan *-ko* dago: *Guibeleco on dena, bareco gaizto* (45), *Nor bere temporaco, arbia abendoco* (65). Aditz morfologiari dagokionez, trinkoen erabilera ugaria da. Horien artean, aipagarri da *daquitzanean* (21); ez dugu garbi zein aditz den, baina NOR-NORI sailekoa bide da, eta *-tza* absolutiboaren plurala da. Beharbada 'dakizkionean' interpreta daiteke, baina laguntzaile izan ordez, adizki trinkoa da. Bestalde, beste errefrauetan *darrayonarenzat* (24) 'jarraitzen duenarentzat', *baledeco* (26) 'edeki ahal dakioke', *diraqui* (66) 'irakiten du' eta agertzen dira. Jusibo trinkoaren adibide bat dago: *eztaquiala* (28). Gainera, *eguic* (28), *eguioc*, *emaioc* (29) agintera trinkoak ere badira. Trinkoez dihardugula, *egin* aditzaren geroaldi trinkoa ageri da 23. errefrauan, *-idi* zaharrarekin: *lan daidi* 'lan egingo du', *ler daidi* 'leher egingo du' eta *euri daidi* 'euri egingo du' (41). Are gehiago, aoristo trinkoa agertzen da: *Eliza ceguienac*, *aldaria ceguienac* (30) eta *Guezurra nenzan Guetarian* 'Gezurra esan nuen Getarian' (44), *Illac aguin zeguian* (50). Aoristo perifrastikoa ere lekukotzen da: *arutz citean*, *aguer citean* (82). Amaitzeko, erdialdeko *dijoan* (85) aldaera agertzen da.

Lexiko aldetik nabarmentzekoak bide dira 49. errefrauko *erausi* 'mugir', ez baita euskaraz adiera horrekin asko lekukotu (*OEH* s.v. *erausi*) eta *inno* 'gruñir' hitza. *OEH*ren arabera (s.v. 1 *iño*), aditz hori Harrietek eta Azkuek beren hiztegietan aipatzen dute, eta iturri bakarra Isastiren errefrau hauxe da: *Idiac erausi bearrean, gurdiac inno* (49). Aipagarri da, bestalde, errefrau berean dagoen *oztu* 'ehortzi' aldaera; *OEH*ren arabera (s.v. *ehortzi*) lekukotasun bakarra da. Era berean, *bear* agertzen da, 'lan' adierarekin: *bearguille* (14), *bearric asco* «harto trabajo» (15). Bizkaieratik kanpo, ez da asko lekukotzen esanahi horrekin. Beraz, posible da errefrau batzuk Nafarroatik eta Gipuzkoatik landa, Bizkaitik hartuak izatea.[670] Bestalde, *andirasuna* (25) eta

[670] Gaztelaniazko itzulpen batean Gorbea eta euskarazko beste batean Castro agertzeak hipotesi honen alde egin dezakete.

*faquea* (35) aldaera bakan lekukotzen dira. Lehena, besteak beste, Axularrek, Materrak eta Pouvreauk erabiltzen dute, *OEH*ren arabera (s.v. *handitasun*). Bigarrena, Isastiren errafrauan agertzeaz gain, XIX. mendeko testu batean agertzen da, *OEH*k dakarrenez (s.v. *bake*). Hegoaldeko testuetan, errefrauetatik landa, nekez agertzen den *oric* 'txakurrik' (70) dago. Horiezaz gain, *burni* aldaera erabiltzen da: *burnia* (12) *burniari* (20). Deigarri da, halaber, *vicicaria* 'bizimodua' (10) hitza, ez baita adiera horrekin gehiago lekukotzen (*OEH* s.v *bizikari*). Errefrauetako batean, *atarian* (44) dago 'ate' esanahiarekin, bai behintzat itzulpenari jaramon egiten badiogu: 'a la puerta'. Aitzitik, *ate* hitzak 'kanpo' esanahia du: *atean* 'de fuera' da 10. errefrauan. Horrez gain, *aytalondo* 'atari ondo' (74) agertzen da. Bestalde, 76. errefrauan *ardien zay* daukagu *artzai* hitz elkartuaren ordainez. Itzulpenari jaramon eginda, *eguraldi* 'buen tiempo' da; ez da hitzaren erabilera ohikoena, *OEH*n ikus daitekeenez (s.v. *eguraldi*).

Amaitzeko, oharra merezi du 81. errefrauan agertzen den *arutz citean* aditzak. G eta L bertsioetan *arritz citean* eta *aserracean* datoz, hurrenez hurren, eta gaztelaniazko ordaina «riñieron» da. Mitxelenak aipatzen duen Diputazioko alean ere *arutz* jartzen du. *OEH*n jasotzen den *har-utzi* esanahiarekin lotuta dagoela dirudi. Hala balitz, berrikusi beharko litzateke hitzaren historia, ez bailitzateke Larramendi izango ez hitzaren asmatzailea ez lehena erabili zuena. Dena den, errefrauen kopiak Larramendiren ostekoak direnez, posible da bere hiztegiaren eragina izatea.

### *2.2.19.4. Karlos V.a eta mandazainaren arteko elkarrizketa*

Euskararen zahartasunaz eta dotoretasunaz dihardueIa, Karlos V.aren adibide bat ematen du Isastik. Dirudienez, errege hark euskarazko hitz batzuk ikasi zituen konfesorea, kapilaua eta medikua euskaldunak baitzituen. Behin, Nafarroan zela, erregeak bidean topatu omen zuen mandazain batekin izandako elkarrizketa jaso zuen Isastik. Erregearen eta mandazainaren arteko elkarrizketa euskaraz izan zen.

### *2.2.19.4.1. Testua*

> <189v> El emperador Carlos Quinto de gloriosa memoria gustaba de hablar en bascuence, que por tener al confesor <190r> capellán y médico bascongados, como se nota en su lugar, o por su curiosidad aprendió algunas palabras; y assí de personas fidedignas he sabido que, encontrando en el camino a un arriero de Nabarra, le preguntó en bascuence:
>
> —*Mandazaya*,[671] *nondic zatoz*? «Arriero, ¿de dónde venís?»
>
> Y respondió:
>
> —*Nafarroatic*. «De Navarra.»
>
> Y luego le preguntó más:
>
> — *Nafarroan gari asco*? «¿En Nabarra hay mucho trigo?»
>
> Y respondió:
>
> — *Bai,*[672] *jauna, asco*. «Si señor, mucho.»

[671] mandazaya] F *mandazaya* : G L *mandazaia* : S *Mandazaîa*.

[672] Bai] F G *Bai* : L *Vai*.

Concluyó el Emperador diciendo:

—*Nafarroan gari asco; batere, batere es*[673] *nerezaco*.[674] «En Navarra mucho trigo, pero nada, nada para mí».

*2.2.19.4.2. Iruzkina*

Fonologia aldetik, *-*ani* > -*ai* gertatu da: *mandazaya.* Gainera, *eu* > *e* egin da *nerezaco* adibidean. Dirudienez, txistukarien neutralizazioa dago hitz bukaeran: *es*, baina *ez* dago G eta L bertsioetan.

Morfologiaren arloan, -*tzako* da destinatiboaren marka, *nerezaco* adibidean ikus daitekeenez. Hain zuzen ere, lekukotasun hau da atzizki hori duen goi-nafarrerazko testu bakarra. Dena den, G eta L bertsioetan -*tako* erabiltzen da: *neretaco*.

Lexiko aldetik nabarmentzeko den hitzik ez badago ere, aipagarri da nafarra izan arren ez dela *anitz* agertzen; bai, ordea, *asco* hiru aldiz.

### 2.2.20. Ama Birjinari eskainitako erromantzea

Euskarazko erromantze hau Francisco Bustamantek idatzi zuen, eta 1656an argitaratu zen honako liburu honetan: *Iusta poética consagrada a las festivas glorias de María en su Immaculada Concepción, mantenida en la parroquial iglesia de Santa María del Mar de la ciudad de Barcelona. Relación de las sumtuosas fiestas que esta ilustre parroquia hizo en honrosas memorias de tan soberano misterio*. Francisco Modolell y Costak osatu zuen liburua. Autoaren bizitzaz ez dakigu askorik. Altunak (2006), Urkizuri jarraituz, azaltzen du kataluniar armadan kargu bat zuela Bustamantek. Bestalde, Altunak (2006: 53) Irargiren datu basean begiratu eta Bustamante abizena duten Donostiako hainbat pertsonarekin lotzen du Francisco Bustamante.

Bartzelonan Itsasoko Andra Mariaren parrokiak, Ama Birjinaren omenezko ospakizunak zirela eta, literatur lehiaketa antolatu zuen. 1609ko Iruñekoen antzera (cf. § 2.2.14), lehiaketa hura hainbat sailetan banaturik zegoen, eta halako bakoitzak jainko erromatar baten izena zuen: «Saturno», «Iupiter», «Luna», «Marte», «Mercurio», «Venus» eta «Apolo» (Altuna 2006: 51). Horietarik bosgarrengoan, «Mercurio» izenekoan, atzerritarrek edo latina, gaztelania edo katalana erabiltzen ez zutenek idatzi zuten:

MERCURIO

Su elocuencia promete más que mediana facundidad en la composición de varias lenguas. Áblalas todas, que quien anda el mundo estafeta de nuevas viejas a de saberlas con perfección. Encargásele su officio, avisando con cuidado de la justa literaria à los estranjeros poetas, que como tales hablan peregrino. Dáseles opción del metro y asunto, con que sea de los del cartel, y la lengua no sea latina, española o catalana. Premiará al más elegante una pieça de valor de 8 escudos (45. or).

---

673 es] F *es* : G L S *ez*.

674 nerezaco] F *nerezaco* : G L S *neretaco*.

Bosgarren atal hori ondoko izenburu honekin hasten da: «Planeta Mercurio. Apoya este elocuente planeta con elogios de peregrinas lenguas la immunidad de la Emperatriz de los Cielos del común pesado pecho de la humana Naturaleza». Bertan italierazko soneto bat, euskarazko erromantze bat —eta horren gaztelaniazko itzulpena— eta italierazko zortziko batzuk daude. Beste zenbait hizkuntzatako olerkiak ere aurkeztu ziren lehiaketako atal honetara, baina sariketatik kanpo geratu ziren.

Fidel Altunak (2006) eman zuen ezagutzera lehen aldiz euskarazko testu hau, edizio kritikoarekin, azterketarekin eta testuaren eta gaztelaniazko itzulpenaren faksimilearekin. Gure edizioa egiteko Altunak argitaratutako faksimilea eta Google Books atarian topa daitekeen liburuaren digitalizazioa[675] erabili ditugu.

Jatorrizko liburuan lehenik euskarazko bertsioa dator, 108-109 orrialdeetan; ondoren dago gaztelaniazko itzulpena —izenburuan esaten denez, egileak berak egindakoa da itzulpena—, 109-110 orrialdeetan. Guk, dena den, aurrez aurre ipini ditugu, bi testuak konparatzea errazago izan dadin. Izenburuak «romance» badakar ere, euskarazkoak ez du beti erromantzearen egitura jarraitzen, ez baitira bertso lerro guztiak zortzi silabakoak eta bikoitiek ez dute beti errima egiten. Aitzitik, gaztelaniazko bertsioak badu erromantzearen egitura —bai silaba aldetik, bai errima aldetik—. Horrek galdera sortzen digu, ea gaztelaniazkoa ote den itzulpena ala, alderantziz, euskarazkoa ez ote den gaztelaniatik ekarria.

### *2.2.20.1. Testua*

| <108> **Romance bazcuenze a la devoción de María Santíssima de Don Francisco Bustamante** | **Tradución del sobredicho bazcuence por el mismo Don Francisco Bustamante** |
|---|---|
| Audi béza sugueác: | Escúcheme la serpiente, |
| sugue bát nay diot eman, | que culebra darle quiero: |
| músquerra ere içandu bazen | aunque fue gentil lagarto |
| guiçonáren contra baraçean. | contra el hombre allá en un guerto. |
| | |
| Zerengátic, erran béza, | ¿Para que se engríe, diga, |
| vere ago çiquiñá | contra quien por privilegio |
| eçarri náy du, atrebitua, | Fue su concepción sin culpa, |
| Ama Virginaren çeruan? | que es escupir contra el cielo? |
| | |
| Culpa gabe andre gurenau[676] | Tal es la Paloma pura, |
| isandu çen consebitu; | de la que dio ser al Verbo, |
| privilejio au, nay balin bádu,[677] | y aunque preciado de sabio |
| eman dezaque Jangoichoác. | jamás alcançó el misterio. |

[675] <https://books.google.es/books?id=BlEsMrsvrDAC&printsec=frontcover&source=gbs_ge_summary_r&cad=0#v=onepage&q&f=false>.

[676] gure au] jat. *gurebau*. Ak ere *gurenau* interpretatzen du. Dena den, ez da zuzenketa ziurra, *gureau* ere proposa bailiteke. Errazena *gurehau* proposatzea bada ere, testuko <h> bakarra litzakete (ik. Altuna 2006: 58-59).

[677] balin bádu] jat. *balinbádun* : A *balinbádu*. Beharbada duplografiaz.

Estaqui nola previnitua
isandu cen Birgiñá,
eternitadeán esta[678] orla
ozca baten esque ilseá?

Veretaco Ama Virgíña
escogitu çuen Jangoichoác.
Vere ama çen, esta. Orrengatic,
guztien culpatíc libreá?

Vere oñetan biçi gáve
balin bádago gayçoá,
nola estu oráy equsten
verris dela burriña minçua?

Isillic begó, vada.[679] Victoria
andre onena da[680] segureán.[681]
Orla, umillic vere burua
escarri[682] béça óynpeán.

Arrengátic geldi[683] védi <109>
deus gabe vere minçoá.
Esta orla opinió ona
dela egui éta fedeá.

¿No save que prevenida
y esenta fue de *ab æterno*,
y que un bocado no pudo
enpecerla, siendo açedo?

Si para Madre de Dios
la elijió Dios, ¿No es muy cierto
que huvo de guardarla limpia
de todo común defeto?

Si está a sus pies sojuzgado
por soberano precepto,
ociosa es la duda y es
más evidente su yerro.

Calle, pues. Triunfa sin duda,
sin la çoçobra del riesgo,
que a tanto asunto invencible
es preciso el rendimiento.

Para que vencido quede <110>
su tesón en tal empleo,
La inmunidad se acredite
Y la opinión logre aciertos.

### *2.2.20.2. Iruzkina*

Testuak grafia aldetik duen ezaugarri esanguratsuena zenbait hitzek duten tileta da: *béza*, *sugueác* (1), *bát* (2) *músquerra* (3), *guiçonáren* (4), etab. Ez dakigu zehazki azentua markatzeko den ala ez, baina gaztelaniazkoan ez dira horren ugariak tiletak. Bestalde, afrikatua behar lukeen kasu ziur bakarra dugu, eta bertan ez da afrikatua grafikoki bereizten: *baraçean* (4). Zalantzazko kasua da, ordea, *escarri* (28), Altunak (2006) *eçarri* zuzentzen badu ere. Agidanean, <sc>-k txistukari frikaria islatzen du adibide horretan. Bestalde, frikarietan, nahastea ageri da apikari eta bizkarkarien artean. Hona adibide batzuk: *isandu* (10, 14) baina *içandu* (3), *consebituá* (10), *estaqui* (13), *esta* (15) baina *ozca* (16), *ilseá* (16). Herskariei dagokienez, <q> erabiltzen da, behin bada ere, <u> bokalaren aurretik: *equsten* (23). Inoz <ch> erabili da herskaria islatzeko: *Jangoichoác* (12, 18). Azkenik, hitz batzuetan tiletdun bokalak agertzen dira, baina ez dakigu zergatik den.

Fonologiaz den bezainbatez, *oa* > *ua* bilakabidearen adibide bat dugu: *minçua* (24). Halere, kasu bakarra da eta *-oá* bukaera duen hitz batekin egiten du errima. Gainera, testu berean *Jangoichoác* (18), *gayçoá* (22) eta *minçoá* (30) ditugu. Horrezaz landara, sinkoparen adibide da *orla* (15). Haspenenaren galerak eragindako hiatoa

[678] esta] jat *esta* dator. Ak *eta* zuzendu du.

[679] begó vada] jat. *degó vado* : A *begó vada.*

[680] andre onena da] jat. *Andre one, ada* : A Andreonea, da. Ak 'andre done' adiera ematen dio.

[681] segureán] jat. *segureá*. Ak hala uzten du, baina guk *-n* gehitzea erabaki dugu zentzuagatik eta errimagatik.

[682] escarri] jat. *escarri* : A *eçarri*. Agidanean, <sc>-k txistukari frikaria islatzen du.

[683] geldi] jat. *geldi* badator ere, Ak *gueldi* ematen du, testuko grafia sistemara egokitzeko.

saihesteko, hasperena galdu den hitzetan *-g-* txertatu da: *ago* (6). Azkenik, *e-* mantentzen da aditzetan: *equsten* (23). Amaitzeko, asimilaziozko sabaikaritzea dago bokal eta diptongo ondoren: *çiquiñá* (6), *Birgiñá* (14), *Virgíña* (17) baina *Virginaren* (8), *oñetan* (21), *isillic* (25), *umillic* (27).

Morfologiaz den bezainbatean, instrumentalean apikaria dugu: *verris* (24). Aldiz, destinatiboan *-tako* erabiltzen da: *veretaco* (17). Zeinahi dela ere lehen elementua, artikulu hurbila dago *gurenau* (9) adibidean. Aditz jokatugabeei dagokienez, Nafarroan ohikoa den *içandu* (3), *isandu* (10) forma pleonastikoa dugu. Bestalde, jokatuetan, indikatibotik landako perifrasietan, aditzoina daukagu *-tu-*z amaitzen diren aditzekin: *audi béza* (1), *gueldi védi* (29). Aldiz, partizipioa dago *-i* bukaera dutenekin: *escarri beza* (28). NOR-NORI-NORK saileko adibide bakarra dago, eta *-i(n)-* errokoa da: *diot* (2).

Sintaxian, 3. lerroko kontzesiboan hiperbatona dago: *ere içandu bazen* 'izandu bazen ere'.

Lexiko aldetik, *audi* 'adi, aditu' (1) agertzen da, baina *OEH*n ez da aldaera hau azaltzen. Bestalde, *oray* (23), *burriña* 'burdina' (24) aldaerak ditugu. Bestalde, itxuraz, *baraçe-* (4) ekialdeko forma agertzen da, eta *erran* (5) dugu. Amaitzeko, erromantzean *egui éta fedeá* esapidea agertzen da; *OEH*ren arabera Lizarraga Elkanokoak ere erabiltzen du. Egun erabiltzen den egitura da; Salaberrik eta Zubirik (2007: 43) Iturenen eta Leitzan jaso dute zerbait ziurtatzeko erabiltzen den esapibe hori. Gaztelaniazko «¡Cómo hay Dios!» esaeraren parekoa da.

Testuko hizkerari dagokionez, Altunak (2006) dio testu hau goi-nafarrerazkoa dela, nahiz eta dituen ezaugarriekin ezin zehatz litekeen hegoaldeko edo iparraldeko goi-nafarrera den. Dena dela, *equsten* adibideak iradoki dezake ez dela hegoaldeko goi-nafarrerazkoa. Izan ere, Iruñetik ipar-mendebaldera dauden testuetan *e-* mantentzen da; aldiz, hegoaldeko lekukotasunetan *i-* agertzen da. Dena den, *e-* arkaismoa izateak ez du laguntzen testua ziurtasunez kokatzen.

### 2.2.21. Felipe IV.ari kantatutako koplak

Kopla hauek Felipe IV.a Handia hil zenean idatzi ziren, 1665eko irailaren 17aren ondoren, beraz. Hain zuzen ere, Nafarroako Errege Kontseiluak antolatutako ohorezko hiletetan kantatu ziren. Horren karietara, Iruñean 1666an argitaratu zen *Honores fúnebres que hizo el Real Consexo de Navarra a la piadosa memoria del Rey N. S. Philippo IV el Grande* liburuan argitaratu zen, 50-51 orrialdeetan. Euskarazko testuaren ondoren gaztelaniazko parafrasi bat dago (53-54. or.).

Kopla hauen egilea Francisco Alesón (Viana, 1634-Logroño, 1715) jesuita izan zen; lehendik ere ezaguna da bera, Moreten *Annales del Reyno de Navarra* osatu baitzuen (ik. § 2.2.3). Bistan denez, jaiotzez Nafarroako eremu ez-euskaldunekoa da; beraz, beharbada, Iruñean zela ikasi zuen euskara. Antza denez, XVI. mendean ohikoa zen gaztelaniaz hitz egiten zen eremuan jaiotakoek eta Iruñean funtzionario lanetan zihardutenek euskara ikastea (Monteano 2017: 63-65). Ez bide da arraroa, beraz, Alesónen kasua hori izatea, hurrengo mendean.

Felipe IV.aren omenezko bertsoak jasotzen dituen liburu horrek 1864-1865. urteen inguruan tirada laburreko berrargitalpen bat izan zuen Parisen Burgaud des Marets-ean. Euskarazko bertsoak Vinsonek (1880) eman zituen lehenik ezagutzera,

frantsesezko itzulpena alboan, eta ondoren Mitxelenak (*TAV* § 3.1.28) jaso zituen Vinsonen irakurketan oinarriturik. Ez dakigu zehatz jatorrizko liburuaren zenbat ale ezagutzen diren, baina badakigu Madrilgo Biblioteka Nazionalean bi ale daudela. Horietarik batean oinarritu gara gure edizioa paratzeko.

Orotara hamar kopla dira, 8a / 8b / 8a / 8b egiturakoak. Mitxelenak (*TAV* § 3.1.28) azpimarratzen duen bezala, bere garaiko sorkuntza da, oso hiperbolikoa, are biraozkoa, hildakoa zeruaren sustentatzailea dela esaten baitu, besteak beste.

### *2.2.21.1. Testua*

<51> **Gure erregue Philippe Andiaren heriotzean**
**Euscarazco coplac**

Emen, lur guti onetan,
dago erreguea sarturic,
baña ez mundu gustian
haren fama estaliric.

Daguien negar guizonac
Philiperen heriotzean!
Haren obrac[684] dirade onac
itsasoan ta lurrean.

Urtu beitez viotçac
negarrez faltagatic,
eta gure beguiac
veude iturriac eguinic.

Auts, Erregue, viurtu zara,
sustentaria ceruen.
Nora, ai nizaz!, joanen gara?
Ceruac daude erortzen.

O, Nafarroa lealá!
<52> Orai bear du acabatu.
Onequin vici izan da,
onequin ere hil bear du.

Ilumbetan dago emen
orai mundu gustia,
cegatic ilundu den
haren iguzqui andia.

O, cometa, guizonen
lotzazale bortiza!
Ioan aitziñan[685] Turcoaren
buru cruela guenzera!

---

[684] obrac] jat. *obrec.*
[685] aitzinan] jat. *ailziñan.*

Pheliperi certaco?
Viotz amoltsu zuenac,
berzec baño gueiagó
vici merezi zuenac?

Dolore andi eta damú
daucana viotzean
Nafarroac ezarri dú
erreguearen obian.

Phelipec mundua utsi dú,
ceruan dago. Verezat
urte aniz vici izan dú,
baña guti gurezat.

### *2.2.21.2. Iruzkina*

Grafian, txistukari frikari eta afrikatuak bereizteko saiakera dago: *viotçac* (9), *auts* (13), *erortzen* (16), *aitziñan* (27), *viotz*, *amoltsu* (30), *utsi* (37). Hala ere, bada salbuespenik: *bortiza* (26), *guenzera* (28), *berzec* (31), *verezat* (38), *aniz* (39), *gurezat* (40). Bestalde, <ts> afrikatu apikaria islatzeko erabiltzen den arren, behin bizkarkaria islatzen du: *utsi* (37). Idazkera kultista mantentzen du *Philippe* (izenb.) eta *Pheliperi* (29) izena idaztean. Horretaz landa, <v> grafema balio bokalikoarekin agertzen da *vtsi* (37) eta *vrte* (39) adibideetan. Testuan, inoiz edo behin, <h> grafema agertzen da. Batzuetan espletiboa da: *heriotzean*, *haren*. Besteetan, aldiz, *i*-ren balio bokalikoa islatzen bide du: *hil.* Bestalde, hitz batzuetan tiletdun bokalak agertzen dira, baina ez dakigu zergatik den.

Fonologia aldetik, *e-u* > *i-u* egin da *iguzqui* adibidean. Dirudienez, asimilaziozko sabaikaritzea dago bai /i/ ondotik bai /Bj/ ondotik: *baña* (3, 40), *aitziñan* (27), *baño* (31). Txistukariak neutralizatu egiten bide dira herskari aurretik: *gustian* (3), *gustia* (22) baina *iguzqui* (24). Bestalde, hitz hasieran herskaria ahostuna da *guenzera* (28) hitzean. Horrezaz gain, *Ioan* (27) agertzeak —hitz hasieran eta letra larriz bakarrik da <i> kontsonantikoa— iradoki dezake **j-* zaharraren ahoskera [j] sabaikaria zela. Testuan ikusten denez, *-rz-* kontsonante multzoa agertzen da *berzec* (31) adibidean. Fonologiarekin bukatzeko, grafikoki beti bereizten ez bada ere, badirudi ozen ondotik afrikatu ahoskatzen dela: *erortzen* (16), *amoltsu* (30); dena den, *berzec* (31) eta *guenzera* (28) ere badaude.

Izen morfologiari dagokionez, instrumentalean aldaera bizkarkaria agertzen da: *negarrez* (10), *nizaz* (15). Azken horretan ikusten denez, *-zaz* erabiltzen da. Destinatiboan *-zat* agertzen da bi aldiz: *verezat* (38), *gurezat* (40). Soziatiboan *-(r)ekin* dago: *onequin* (19, 20). Aditzari dagokionez, espero bezala, *-n* partizipioa duten aditzekin geroaldian *-en* gehitzen da: *joanen* (15). *Izan* aditzaren adizkietan *dirade* pleonastikoa dugu. Bestalde, jusibo trinkoa ageri da: *daguien negar guizonac* (5), *veude iturriac eguinic* (12). Horiekin batera, *beitez* 'bitez' (9) aditz laguntzailea dugu, diptongoarekin. Azkenik, botibozko forma arkaikoa lekukotzen da: *ioan aitziñan* (27).

Sintaxi aldetik, aipatzekoa da ausazko perpausetan *cergatik … (e)n* egitura dagoela: *cegatic ilundu den* (23). Bestalde, errima eta, beharbada, estilo kontuengatik hiperbatona dago: *sustentaria ceruen* (14). Azkenik, bi kasutan objektua mugagabean agertzen da: *viotz amoltsu zuenac* (30), *dolore andi eta damú / daucana* (33-34).

Lexikoan *guti* (1, 40) aldaera dugu eta, gainera, (1)-en 'txiki' adierarekin. Halaber, *lotzazale* (26) agertzen da 'amedrentador' esanahiarekin; alegia, *lotsa* 'beldur' adierarekin lekukotzen da da, ekialdean ohi bezala. Bestalde, *orai* (18, 22) aldaera. Amaitzeko *sustentari* (14) hapaxa lekukotzen da.

## 2.2.22. Kurtederia etxeko armarriko euskarazko esaldia

Burundako Iturmendi herrian Kurtederia deritzon jauregi bat dago, XVIII. mende hasieran Joseph Galarzak (1660-1734) eraikiarazia. Dirudienez, etxe horretan galartzatar apaizak bizi izan ziren XVIII. mendean.

Jauregia ikuspuntu filologikotik interesgarria zaigu atarian duen armarriagatik: 1706 urtea darama eta gainaldean latinezko eta azpialdean euskarazko esaldiak baitaude. Arbizuk (1993), Iturmendiko arkitektura aztertzen zuelarik, jauregiaren eta bere armarriaren berri eman zuen testuaren transkripzioarekin. Geroago, berriro argitaratu zuen transkripzioa Arbizuk (1996: 258). Berrikiago, Santaziliak (2014a) Kurtederia etxeko armarriaz eta, batez ere, bertan dagoen euskarazko testuaz hitz egin zuen bere blogean. Armarriaren eta testuaren argazkiak ere jarri zituen sarean, eta horiexek erabili ditugu gure irakurketa egiteko.

### *2.2.22.1. Testua*

> Ecce Galarzarum notam quae inurunt arma nobilitatis filiis posteritatis suae sumptibus abbatis D. Joseph de Galarza fixa adnitorem domus ornatumque suae. Anno MDCCVI.
>
> [armarria]
>
> Galarzatarren armac dira adornuz ifeni[686] araziac Don Jossepe de Galarza abbad de Iturmendiac.

### *2.2.22.2. Iruzkina*

Testua laburra izanik, iruzkintzeko gauza askorik ez dago. Dena dela, goi-nafarreraren ikuspegitik bi ezaugarri aipagarri ikusi ditugu. Batetik, instrumentalean aldaera bizkarkaria dago armarriko esaldian: *adornuz*. Bestetik, *ifeni* irakurri dugun horretan *YRENI* jartzen du, baina errata izan daiteke, ez baita aldaera hori inon lekukotzen. <R>-ren ordez, <B> zein <F> izan litezke proposamen zuzenak, eta ez dugu bataren edo bestearen aldeko argudio sendorik. 1745 aurreko lekukotasunetan Joseph Elizalderen gutunetako batean agertzen da *ifeni*. Hori dela eta, *f* hobestea erabaki dugu, baina beste lekukotasun batzuetan *imini* aldaera ere badago. Testu berriagoetan, maiz izan ez arren, *-f-* agertzen da.

[686] ifeni] jat. *YRENI*. Zuzenketa hau Santaziliak (2014a) proposatua da.

Bestalde, esaldia osorik euskarazkoa izan arren, toponimikoan gaztelaniazko egitura agertzen da: *abbad de Iturmendiac*.

### 2.2.23. Iturmendiko gurutze-bideko euskarazko testuak

Burundako Iturmendi eta Aritzagako ermitaren artean hainbat herritan ohikoa den gurutze-bidea dago. Halere, Iturmendiko horrek duen berezitasuna da gurutzeetan euskarazko testuak dituela. XVIII. mende hasierakoak dira gurutzeok, eta horietako batean 1712 urtea jartzen du.

Arbizu (1996) izan zen, dakigula, testuen azterketa epigrafikoa egin zuen lehena. Bereak dira ondoko hitzok:

> Terminamos nuestro reconocimiento inspeccionando las robustas cruces de piedra arenisca pertenecientes al Viacrucis que existe entre el pueblo y la ermita Aitzaga (faltan algunas). Seguramente son de finales del siglo XVII o principios del XVIII, ya que la última se decora con los símbolos de la pasión típicamente barrocos. La particularidad de estas cruces es que de forma excepcional se inscribieron en ellas los pasos de viacrucis en euskera, señal inequívoca de que lo escribió la gente del pueblo que no conocía otra lengua, mayoritariamente. (Arbizu 1996: 261)

Berrikiago, Sakanako *Guaixe* aldizkarian (2014-07-18) gurutze-bide honi buruzko erreportaje labur bat egin zuten, eta bertan Arbizuk eta Markotegik egindako testuaren irakurketa dago. Erreportaje hori agertu eta gutxira Santaziliak (2014b) bere blogean gai hau jorratu zuen, eta *Guaixe* aldizkariko irakurketa eskaintzeaz gain testuen irudi batzuk —A aldekoak— eta zenbait interpretazio eman zituen. Hain zuzen ere, irudi eta irakurketa horiek erabili ditugu gure edizioa prestatzeko.

#### *2.2.23.1. Testua*

| Estazioa | A aldea | B aldea |
|---|---|---|
| V. | C […]gundu cenean[687] | Antonyo de Goyechea […] |
| VII. | Guruzearequin bigarrenean[688] erori […] | Nicolas de Zufiaurrec eguin arazia |
| VIII. | Jerusalengo alabac consoladu zioten | Pedro[689] Juaquin de Mendia año 1712 |
| XI. | Jesuchristo gure jaun[690] (da?)go guruce(a)n[691] ilzez josiri[c] | […] M(.)guel de [g]oicoe[c]hea y Echeverr[i]++g+ |

687 cenean] ez da garbi irakurtzne *ce-* eta bigarren *-e-*.
688 bigarrenean] <i> eta <g>-ren artean beste letra bat dagoela dirudi.
689 Pedro] *Pedzo* dakarte Arbizuk eta Markotegik.
690 jaun] *juan* dakarte Arbizuk eta Markotegik.
691 gurucean] harriak duen zuloa dela eta, <a> ez da ikusten.

*2.2.23.2. Iruzkina*

Testua laburregia da ezaugarri dialektalak aurkitzeko, eta batzuetan ezin da testua osorik irakurri. Hala ere, berreraiketa batzuk egin ditu Santaziliak (2014b). Hori horrela, V. estazioko A aldean *C[ireneo(a)c la]gundu* izan litekeela dio. Bestalde, VIII. estazioko A aldean dagoen *zioten* dela eta halaxe dio:

> Hirugarren gurutzean, *zioten* da gatazkatsua. Ez nago ziur <z> baino, ez ote den <c> ageri. Bestalde, aditzaren amaiera irakurgaitza da, baina hau VIII. estazioa izanda, espero genukeen aditza hurbilago legoke *zituen*-etik, Jesus izan baitzen kontsolatzailea, eta ez kontsolatua.

Izen morfologiaz den bezainbatez, ergatibo pluralean *-ak* dugu: *alabac*. Bestalde, soziatiboan *-rekin* aldaera ageri da, ez *-reki* hegoaldeko goi-nafarrerazko testuetan ohikoago den bezala: *gurucearequin*. Instrumentalean aldaera bizkarkaria dugu: *ilzez*.

Aditz morfologian ikus dezakegunez, gaztelaniatik mailegatutako aditzetan *-adu* partizipioa dugu, ahostunarekin: *consoladu*. Gainera, *-i(n)-* erroa erabiltzen da NOR-NORI-NORK sailean: *consoladu zioten*.

## 2.2.24. Perotxegiren euskarazko hamarrekoa

Urte luzez Juan Perotxegi Ainhoan jaio zela uste izan arren, Bidadorrek (1999: 6, 2016: 63-65) zalantzarik gabe baieztatzen du Garesen jaio zela. Espainiako artilleriako komisarioa izan zen, eta gerra kontuez idatzi zuen *Reflexiones curiosas y notables sobre la ciencia y el valor para la guerra* liburua 1752an. Nolanahi ere, euskalarioi interesgarriago zaigu beste liburu hau: *El origen y antigüedad de la lengua bascongada y de la nobleza de Cantabria*. Liburuaren lehen argitalpena 1731koa da, eta Bartzelonan ikusi zuen argia Joseph Texidòren inprimategian. Don Juan Idiakez Zaraitzuko kondeari eskainia da liburua eta helburua atarian bertan agertzen da:

> En que se haze ver que dicha lengua fue la primera que se habló en el mundo, y la misma que traxo Tuval a España, en el año 1800 de la Creación, con la particularidad de cómo y por dónde se introduxo para poblar esta Monarquía, y assí mismo se expressa cómo se introduxeron los agotes en el Valle de Baztán y en el País de Bascos, en el año 506, con otras curiosidades dignas de ser sabidas para todos los que son oriundos de dicha lengua.

Lehendik ezagunak ditugun euskararen apologien gisako liburutto bat da Perotxegirena. Halere, guztira ez ditu 50 orrialde baino gehiago. Perotxegiren obra horrek izandako argitalpenak direla eta, Bidadorrek (2004: 28-29) bi aipatzen ditu: 1731koa eta 1760koa. Dena den, 1738an beste argitalpen bat izan zuen. Vinsonek (1891-1898) ez zuen bigarren argitalpen horren berri; bai, aldiz, Urkixok (Vinson 1984: 167). Bigarren argitalpen hori ere Bartzelonan atera zen Joseph Texidòrenean, eta azalean azaltzen denez bi atal gehitu zitzaizkion: «a que se le añaden otras dos partes, probando en ellas de ser dicha lengua la estirpe y origen de la Augustíssima Casa de Bourbon». Dena dela, azaleko ohar hori gora behera, 1738koa 1731koaren beste emisio bat besterik ez dela dirudi; ez dakar inolako aldaketarik edo gehiketarik, ez bada grafian egindako $v \rightarrow u$. Halere, ez dugu konparaketa sistematikorik egin, gure lanetik aldenduko baikinateke.

Urkixok Vinsonen lanari egindako oharrean esaten duenez, 1738koa tirada laburreko berrargitalpena izan zen, eta egun bi ale besterik ez dira ezagutzen: Urkixok bere eskuetan zuena eta Madrilgo Biblioteka Nazionalean dagoena.

1760an liburuak beste berrargitalpen bat izan zuen. Horrek Iruñean ikusi zuen argia Martinezen oinordekoen inprentan. Edizio horri izenburua aldatu zitzaion atarian: *Origen de la nación bascongada, y de su lengua, de que han dimanado las monarquias española, y francesa, y la Republica de Venecia, que existen al presente*. Hala ere, azken orduko aldaketa delakoan gaude; izan ere, bi onespenetan (biak 1760an datatuak) eta izenburu laburtua daraman katariaurreko orrialdean *Origen de la lengua vascongada* jartzen du.

Dirudienez, Iruñeko 1760ko argitalpenak bi emisio izan zituen, gutxienez. Sarean aurki daitezkeen hiru ale erkatu ditugu, gainetik bada ere: Google Books atarian dagoena,[692] Liburuklik-en dagoena[693] eta Gallican dagoena.[694]Azken bietan, liburuaren atarian, *segunda impresión* jartzen du; aldiz, ez da halakorik lehenengoan. Beraz, litekeena da 1760an bertan Iruñean liburua bi aldiz inprimatu izana; edo, ziurrago dena, bigarren hori beste emisio bat izatea, bakar-bakarrik ataria aldatu zitzaiolarik, Vinsonek aipatzen dituen oniritziak eta hutsen zuzenketa berdinak direlako.

Izenburua moldatzeaz gain, azken argitalpen hori luzeagoa da; aurretik lehenak ez dakartzan onespenak, lizentziak eta hutsen zerrenda dakar; bide batez, Sebastian Mendibururen sinadura du onarpenak. Edukiari dagokionez, aldaketa gehiago gehitu zitzaizkion lehenari eta obraren egitura ere aldatu zuen; hala, bada, 1760koa luzeagoa da, eta 100 orrialdetik gora ditu.

1877an beste berrargitalpen bat izan zuen. Bilbon ikusi zuen argia Velascoren inprentan eta 1731koa hartu zuen oinarri, ez 1738 ezta 1760koa ere. Azken hori oinarri hartu zuen beste edizio bat argitaratu zen Bilbon 1905ean. Azkenik, 1978an faksimilea argitaratu zuen Ediciones Vascas argitaletxeak, Larramendiren *De la antigüedad y universalidad del bascuenze* lanarekin batera. Faksimilea 1760ko edizioan oinarriturik dago.

Perotxegiren liburua gaztelaniaz idatzirik dago, ezagutzen diren euskarazko apologiak egon ohi diren bezala. Hala ere, amaieran liburuak euskarazko hamarreko bat dakar kristau kaparetasunari gorazarre egiteko. Gainera, 1760ko argitalpenak hamarreko horren aurretik euskarazko beste testu labur gehiago ditu; corpusera ez ditugu ekarri kronologikoki denboraz kanpo daudelako; dena den, ik. beherago.

Ez dugu euskarazko testu horien beste edizio edo berrargitalpen modernorik ezagutzen, ez bada geuk (Reguero argitaratzear-2) beste testu batzuekin aurkeztu duguna. Saio horretan 1731koan agertzen den bertsoa bakarrik eman dugu, baina hemengo edizioa prestatzeko 1731ko (A) edizioa hartu dugu oinarri eta 1738ko (B) eta 1760ko (C) bertsioetan dauden aldaerak aparatu kritikoan jaso ditugu. Gure ediziorako Liburuklikek eta Koldo Mitxelena Kulturuneak sarean dituzten argitalpenak erabili ditugu.

---

692 <https://books.google.es/books?id=6K349FMIFLsC&printsec=frontcover&source=gbs_ge_summary_r&cad=0#v=onepage&q&f=false>.

693 <http://www.liburuklik.euskadi.net/handle/10771/26421>.

694 <http://gallica.bnf.fr/ark:/12148/bpt6k9355765>.

Hamarrekoak ez du izenbururik, baina 1731ko argitalpenean (eta 1738ko berrargitalpenean) euskarazko testuarekin batera, gaztelaniazko eta frantsesezko beste hamarreko bana datoz orrialde berean, eta aurretik dator azalpena:

> He resuelto añadir a mi discurso esta coleta, no con la mira de que se me pongan ufanos y presumidos mis paisanos, sí con la de que tengan presente, toda la esfera que poseen y pertenece a su nobleza, para que por este medio, puedan defenderse de los ataques alegóricos y presumptuosos de aquellos que dizen descender (en línea recta) de los reyes godos. Y para que los unos y los otros sepan en que consiste la verdadera nobleza, lean las dézimas u odas que se siguen, y sabrán cual es la más perfecta.

Hamarrekoak datozen orrialdean, euskarazko testuaren alboan, perfektuena datekeena azpimarratuz, ondoko oharra dakar orriaren eskuineko marjinan:

> Unos dirán que no te entienden, otros que careces de la perfección del metro; y yo respondiendo por ti diré que tampoco entiendo de poesía, pero que la sublimidad de tu essencia excede a todas las sentencias de los poetas profanos.

Esan bezala, 1731koak eta 1760koak duten alde nagusia edukian izandako aldaketak dira, baina bietan euskarazko olerki bera eta hori emateko arrazoia berbera bada ere, ezberdin azaltzen du. Gainera, esan bezala, 1760koan euskarazko bertso gehiago ditu (1760: 97-100):

> Muchos bascongados, que presumen de haver aprendido algunos rudimentos de la lengua latina, y con bastante regularidad la castellana y la francesa, muy desdeñosos passan a criticar su propia lengua, diciendo que carece de voces y expresiones, tanto para escribir cuanto para hablar bien, sobre que no puedo escusar decirles que, mientras han aprendido las que eran estrangeras para ellos, olvidaron la originaria, o que sería muy superficial la parte que supieron de ella; pero querer motejar una lengua tan sin igual que tiene la gloria de estar vagando de cinco mil y más años a esta parte por el mundo sin haver necessitado de Academias ni de Cruscas para conservar la existencia de su belleza, que me digan los tales Doctores de Philosophía nueva si encontrarán en el mundo una lengua que en tres cuartetas y una décima contenga tanta energía y alma como las que se siguen a la lengua bascongada.
>
> *Sobre la essencia de la Santíssima Trinidad*
> Jaungoicoa zarelaric choilqui bat,
> hiru aurquitzen zarete betan,
> berdincen duzularic betico bat
> dagoen guisan ene sinestetan.
>
> *En elogio del Santissimo Sacramento*
> Betico jaun handia,
> zu zara miragarría,
> behin here ez icusía,
> zerelaric chit arguia.

*Epitaphio sobre la losa de un difunto*
Aise dago emen datzana,
nor bere echean den bezala,
aiseago ceruan dagoena
baliz bezala Jesusen itzala.

Horien ondotik dator jarraian dakargun bertsoa.

### *2.2.24.1. Testua*

<46v> Ohore handia[695] da eguiazqui[696]
aita nobletaric[697] iaustea,[698]
bainan[699] urruntzen dira segurqui
diotenec hau dela asco izatea.[700]
Nior esta[701] ceruan sartucó,
es ohore onerat helducó,
norc here bere aldetic
es badu arcen prestutasuná
eta hidalguiaren edertasuná[702]
Iesus estiaren amoriotic.[703]

### *2.2.24.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, <h> grafema erabiltzen du nolakotasun bereko bi bokal bereizteko: *ohore* (1, 6). Hitz hasieran badu <h> espletiborik: *here* (7). *Hidalguiaren* (9) adibidean badirudi irizpide etimologikoari jarraikiz <h> utzi duela. Badira beste <h> batzuk ere —*handia*, *hau*, *helducó*—, baina ez dirudi hasperena islatzeko direnik; cf. *nior*, *arcen*. Amaitzeko hitz batzuek <`> diakritikoa dute: *sartucó* (5), *helducó* (6), *prestutasuná* (8), *edertasuná* (9). Guztiak daude hitz bukaeran eta bertso-lerroko azken hitzak dira.

Fonologiaz den bezainbatean, bokaletan *-ee-* > *-e-* bakuntzea gertatu da: *nobletaric* (2). Horrez gain, herskari aurretik txistukarian apikariaren mesedetan neutralizazioa dagoela dirudi: *esta* (5), *es badu* (8), *estiaren* (10), baina *eguiazqui* (1). Hitz amaieran txistukari igurzkaria duen adibide bakarra dago, eta hor neutralizazioa gertatu da: *es ohore onerat helduco* (6). Bestalde, **j*-ri dagokionez, badirudi ahoskera sabaikaria dela: *iaustea* (2), *Iesus* (10).

---

[695] handia] A B *nobletaric* : C *handía*.
[696] eguiazqui] A B *eguiazqui* : C *Equiazqui.*
[697] nobletaric] A B *nobletaric* : C *honetaric.*
[698] iaustea] A B *iaustea* : C *etorzea*.
[699] bainan] A B *bainan* : C *baiñan*.
[700] izatea] A B *yzatea* : C *izaitea*.
[701] esta] A B *esta* : C *es da*.
[702] edertasuna] A B *edertasuna* : C *adertasuna*.
[703] amoriotic] A C *amoriotic* : B *Amorèoric*.

Izen morfologiari dagokionez, *nior* (5) izenordaina agertzen da. Ablatiboan *-etarik* aldaera zaharra daukagu *nobletaric* (2) adibidean. Aldiz, adlatiboan *-rat* dugu: *onerat* (8).

### 2.2.25. Martin Salgadoren hamarrekoa

1739an Martin Salgado agustindarrak honako liburu hau argitaratu zuen: *Congratulación festiva y expresión amante con que hizo visible el alma el noble fiel político cuerpo de la grande augusta ciudad de Tudela en la alta casualidad de ilustrar su suelo la perla de Alemania, que con el engaste español brilló en la mano del gran monarca Carlos II, a quien el polvo le sea leve, la gran reina nuestra señora dña. María Ana de Neoburg*. Haren helburua Karlos II.aren alargunak Tuterako Santa Anako kaperara eginiko bisitaldiaren berri ematea zen. Liburuak Logroñon ikusi zuen argia Mathías San Martínen inprimategian.

Liburua euskalariontzat interesgarri izan badaiteke, bertan dagoen olerki eleaniztunagatik da. Hain zuzen ere, hamar hizkuntzaz osatutako olerki bat dago liburuan, tartean euskarazko esaldi labur bat duelarik.

Joxemiel Bidadorrek (1998) eman zuen ezagutzera *Egunkaria*ren *Nafarkaria* gehigarrian, 1998ko urtarrilaren 16an. Orain, berriro argitaratu dute Bidadorren idatziak jasotzen diren liburuan (Bidador 2016: 51-53).

#### *2.2.25.1. Testua*

lat. Quorsum tendis sine me,
basc. Andréa nere vizia?
ytal. Ha! Chi è questo, dove và?
españ. Lo que mi alegría fue
francés. Voyant cela, sont fache,
arabig. Amará arrajeliá
gallego. En chorar à xentadá
portugués. Naon à vendo no seu pazo
griego. Hé basilisa (stonaxo)
xerga. Los chisos no endirga ya.

#### *2.2.25.2. Iruzkina*

Esaldiaren laburrak ez du datu interesgarri askorik eskaintzen. Dena den, grafia aldetik, interesgarri bide da *andréa* adibideak duen tileta —jatorrizkoan <`> dago—; beharbada bokala silabikoa dela, alegia *an-dré-a* irakurri behar dela, islatzeko izan daiteke. Itxuraz, bederen, 7 silabakoa behar bailuke bertso-lerroak; beraz, *vizia*-k bi silaba lituzke: *vi-zia*. Bestalde, *nere* posesiboa agertzen da, *eu* > *e* gertatu ondoren.

## 2.3. GOI-NAFARRERA ZAHARREKO TESTU LUZEXKAK

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharreko testu laburrak ikusi ondoren, luzexeagoak aurkeztu eta aztertuko ditugu jarraian. Luzera ertaineko hainbat testu ditugu multzo honetan, besteak beste, dotrina atalak, sermoiak eta gutunak. Zaharrena XVI. men-

dearen akabukoa da, eta berriena XVIII. mendearen erdialdekoa. Atal honetan dakartzagun testu guztiak eskuizkribatuak dira.

### 2.3.1. Aresoko erlijio testuak

Aresoko elizako artxiboan zegoen *Constituciones Synodales del Obispado de Pamplona* (Rojas y Sandoval 1591) liburuaren alean euskaraz idatzitako zenbait erlijio testu daude txertaturik. Satrustegik, artikulu sorta batean, Aitagurea (1990a), Kredoa (1990b) eta Agurmaria eta Salbea (1991b) argitaratu zituen, bakoitzean faksimilea eta edizio paleografikoa emanik. Satrustegik emandako testu horiek guztiak izenburu orriaren ifrentzuan idatzita daude. Dirudienez, Satrustegik *Euskal testu zaharrak II* bilduman sartu nahi zituen testuok:

> Uno de los últimos hallazgos que figurará en el segundo tomo de la colección de documentos vascos *Euskal testu zaharrak*, es la versión de «haec quatuor» escrita a mano en las contratapas de un ejemplar de las *Constituciones Sinodales de Pamplona,* edición de 1591. (1991c: 81)

Satrustegik emandako lekukotasunez gain, badira liburuan ezagutzera eman ez zituen euskarazko testu gehiago, hona guk, dakigula, lehen aldiz ekarriak. Hain zuzen ere, Kredoaren eta Aitagurearen beste aldaera bana jasotzen dira, eta horiekin batean artikulu fedezkoak ere bai. Guztiak orrien ertzean idatzita daude eta, dirudienez, pertsona berberak idatzi zituen, liburuan datorren gaztelaniazko bertsioaren itzulpen gisa.

Euskarazko pasarte horiek guztiak datarik gabe daude, liburu bati erantsitako eskuzko iruzkin eta oharretan ohi denez. Haatik, Satrustegiri jarraituz (1990a: 42), oso litekeena da liburuaren inprimatze urtetik hurbil idatziak izatea; izan ere, Trentoko Kontzilioan eta sinodal horietan bertan agindu zen bikario eta apaizek igande eta jaiegunetan ahoz predikatzea eta dotrina irakastea:

> […] a los cuales el sancto Concilio Tridentino obliga, que todos los Domingos, y fiestas declaren la palabra de Dios, cada uno en su parochia, y enseñen la doctrina christiana. Por tanto S.S.A. estatuimos, y ordenamos, y mandamos, que de aquí adelante ningún Cura, ni vicario de este Obispado se escuse de lo hazer en los dichos días Domingos, y fiestas de guardar […] y que todos los Domingos después de dicha la plegaria enseñen en alta voz la doctrina christiana al pueblo, por la orden, y forma por Nos dada en estas constituciones. (Rojas y Sandoval 1591: f. 33r)

Hortaz, Aresoko orduko apaizak berak euskaratu zitzakeen otoitz eta dotrinaren zati horiek, bere asteroko zereginetan lagungarri izateko. Ohart bedi euskaraz agertzen diren pasarteak dotrinaren zatirik behinenen artean daudekeela:

> […] que no desposen por palabras de presente, ni velen a ningunos, sin que sepan la doctrina Christiana, o a lo menos el Pater noster, el Aue Maria, Credo y la Salue regina, y los mandamientos de la ley de Dios, y de la Iglesia, artículos de la fee, y los pecados mortales. (Rojas y Sandoval 1591: f. 129r)

Egun *Constituciones Synodales* liburuaren Aresoko alea Leitzako elizako artxiboan dago, eta bertan ikusteko eta argazkiak ateratzeko aukera izan dugu. Gure edizioa argazki horietan oinarrituta dago. Azaleko orriak ertza urraturik du leku batzuetan eta hori dela eta ez da testua osorik ikusten.

#### *2.3.1.1. Testua*

<Iv> [*Symbolum*] […]a […] [J]aungoico ayta eterno podore […] […]dela, [c]reat[u] cit[u]ena[704] zeruac eta lurra. Eta […] [unig]enito Jesu Christo gure jaun eta salv[ad]ore […] [co]ncebitu içan baiçen Spiritu San[ct]uaren […] […]a jayo çan Maria virginaganic, padecitu eta ya[…][705] erioça eta[706] passio guruçean Ponçio Pilatosen sentençiaz; sepultatu çuala,[707] jaisi cela limbora[708] eta eren egunean resuçitatu çela illen ertetic; igo çuala çeruetara, non baytago esseriric bere ayta eterno podore guztia duenaren escuieco aldean, nondic etorrico bayta viçien eta illen iuzgacera. Sinestacen dut Spiritu Sanctu jaunagan, eta Eliça[709] ama sanctu[710] catholicoagan, sanctuen ayuntamentuan. Sinistaçen dut dela podorea peccatuen[711] barcacioan[712] eta araguiaren ressurrectioagan, eta seculaco viciça. Amen.

*Pater noster*. Ayta gurea, çeruetan çaodena, sanctifica bedi çure içena. Betor çure erreynua. Cumpli[713] bedi çure[714] vorondatea nola bayta çeruan ala lurrean. Iguçu egun guere egunorozco oguia. Barca jazquiguçu guere peccatuac, guc guere contra eguiten dizquigueney barcaçen diezcun beçala. Ezcaiçaçula[715] juci erorçen tentacioetan. Libra gaiçaçu[716] gaiçetarica. Ala viz, gure jauna eta salvadorea.

*Ave Maria*. Agur Maria, graciaz betea, Jauna da çurequin. Çarade bedicatua andre guztien ertean. Bedicatua da çure sabel virginaleco frutua, Jesus bedicatua. Sancta Maria, Jangoicoaren ama, erregutu eguiozu gure Jaunari, barca[717] daquigula guri becatarioy, orayn eta gure erioçaco[718] orduan. Ala viz, Jauna, gure salvadorea.

*Salve regina*. Agur Erreguia, andre ama misericordiaz betea. Çu cerade viçiça dulçea, gure esperançea. Agur gueyago, Andrea. Çure deyez gaode Evaren hume desterratuoc. Çuri[719] emayten diçugu gure negarra, lagrimazco valle onetan. Ea bada, advogada gurea, converti içaçu çure[720] misericordiazco

---

[704] creatu cituena] orria apurturik dagoenez ez da osorik ikusten.
[705] ya] baliteke falta den testua *ya[san çituen]* izatea.
[706] eta] esk. *et.*
[707] çuala] ez dago garbi <e> den ala <a> den; hala ere, badirudi <a> dagoela idatzia <e> baten gainean.
[708] jaisi cela limbora] lerro artean.
[709] Eliça] esk. *Elica*.
[710] sanctu] jarraian zerbait dago ezabatuta, ziurrenik *-agan*.
[711] peccatuen] *p-* letra *b-* baten gainean idatzia.
[712] barcacioan] esk. *barcaciona*.
[713] Cumpli] zulo bat dago <l>ren gainean.
[714] çure] esk. *cure*.
[715] Ezcaiçaçula] esk. *ezcaiçacula*.
[716] gaiçaçu] esk. *gaiçacu.*
[717] barca] esk. *baca.*
[718] erioçaco] esk. *eriocaco*.
[719] çuri] esk. *curi.*
[720] çure] esk. *cure.*

veguioc gugana. Eracusi eguiguçu gure erioçaco orduan Jesu Christo çure[721] fruitu bedicatua. O clemenciazco ama, o piadadezco virgina, o dulce eta suabe beti Virgina Maria, çaquizgula valia. Ala viz, Jauna, gure salvadorea.

<2v> [Sine]staçen[722] dut Jangoy[co a]ita guçiz podero[soag]an, çeruaren eta [lur]raren creadorearen[gan] eta[723] Jesu Christo ar[en] seme bacoiz eta gu[re ja]unarengan, ceyn [conc]ebitu baitçen Spi[ritu] Sanctuaren obraz. [Jayo] çen Virgina Maria[ren]ganic; igaro çuen[724] [pass]io dolorezcoa Pon[çio Pi]lato iuezaren azpian; [sac]rificatu çuen,[725] il çuen,[726] […][727] çuen. Jautsi cen infer[nueta]ra; irurgarren egu[nean i]llen artetic resu[citat]u cen; igo çuen[728] çe[rueta]ra, non baitago [Jang]oico ayta poderoso[aren] escuieco aldean, [nondi]c etorrico bayta [illen] eta bicien iuzga[cera]. Sinistacen dut [Spiri]tu Sanctuagan, […] sanctuaren ho[…]gan,[729] sanctuen [comu]nio eta ayunta[mien]tuagan, becatuen [barc]acioan, defunctu […]en resurrecioan [eta] vicitce seculacoan. Amen.

<3r> Articulo fedez[coac] dira amalaur. [Le]neco çazpiac[730] Jan[goi]coar[en] divinidade[co]ac, beste çazpiac[731] [Chris]to gure salvado[rear]en humanidade [san]duarenac.[732] Divini[dade]arenac dira: Len[ena] sinestacea Jau[ngoi]co bat gucis pode[roso]agan. 2. Sinesta[cea] dela Ayta. 3. D[ela Se]mea. 4. Dela Sp[iritu San]ctua, eta Ayta, [Se]mea eta[733] Spiritu[734] Sanct[ua] […]ra dela Jaungo[ico bac]ar eta irur per[sona]. 5. Da sinistace[a Jaun]goicoa dela ceru[aren] eta lurraren cre[adorea]. 6. Da sinistacea [dela] salvadorea 7. Da [sin]estatcea dela g[lori]ficaçaillea.[735]

Christo gure salvadorearen humanidadeac dirade ohec: Lenena da sinistatcea Jaungoicoaren seme Christo gure jaun eta salvadorea conce[bitu] cela Spiritu Sanctuaren obraz, Virgina Andre Dona Mariaganic aren sabel virginale[an]. 2. Jayo çela Virgen Andre Dona Mariaganic, ura gueldiçen çela virgen erdi bayno le[n, er]dicean eta erdiz guero. 3. Passatu çuela passio dolorezcoa Poncio Pilatoren aguinteare[n az]pian, cruçificatu çutela,[736] ill cela eta ostu çuela.[737] 4. Jautsi cela infernuetara eta […] atera cituela sanctuen animac.

---

721 çure] esk. *cure.*
722 Sinestaçen] *Sinis-* ere berreraiki genezakeen, testuan bi aldaerak tartekatzen baitira.
723 eta] esk. *et.*
724 çuen] esk. *cuen.*
725 çuen] esk. *cuen.*
726 çuen] esk. *cuen.*
727 Lerro hasieran falta den hitza *sepultatu* edo *ostu* ‘ehortzi’ izan liteke, biak lekukotzen baitira testuan.
728 çuen] esk. *cuen.*
729 ho[…]gan] espero genuke *catholicagan* edo halako zerbait agertzea, baina hitzaren hasiera argi eta garbi *ho-* da.
730 çazpiac] esk. *cazpiac.*
731 çazpiac] esk. *cazpiac.*
732 sanduarenac] esk. *[…]duarena.*
733 eta] esk. *et.*
734 spiritu] esk. *S.*
735 glorificaçaillea] esk. *g[…]ficacaillea.*
736 çutela] esk. *cutela.*
737 çuela] esk. *cuela.*

5. Resucitatu cela irurgarren egunean. 6. Igo çue[la ceru]etara, non baytago Jaungoico[738] ayta guciz poderosoaren escuian. 7. Andic eto[…] iuzgatcera, ematera oney gloria Paradisuco, ceren aren ma[…].[739]

<6r> Ayta gurea ce[rue]tan çaudena, [santi]fica bedi[740] çure içe[na]. Etorri bedi çure [r]eynua. Cumpli [bedi] çure[741] borondatea [ala çeru]an nola lurrea[n]. Gure egunoroz[co ogu]ia iguçu egu[n]. Barca iazquigu[çu] guere[742] çorrac g[uc] barcaçen dizte[gun] beçala guere ç[ordu]ney, eta ezcay[ça]çula iutci te[ntaci]oan erortera, […]tic[743] goarda gay[çaçu] gayz gucietar[ic]. Amen.

### *2.3.1.2. Iruzkina*

Testuaren grafia aski ongi egokitzen zaio eman diogun datazioari, xvi. mende amaiera edo xvii. mende hasiera alegia. Batetik, <u> grafemak balio bokaliko zein kontsonantikoa har dezake: *lurra* (1v), *ura* (3r), *uiz*, *saluadorea*, *Euaren* (1v); alabaina, <v> grafema beti kontsonantea da: *viçien*, *vorondatea*, *viz*, *salvadorea*, *veguioc* (1v), etab. Hirutan <j> balio bokalikoarekin erabiltzen da: *jnfernuetara*, *Jgo* (3r), *jutcy* (6r). Azken adibide horrek, besteak beste, erakusten digu <y> bokalikoa ere agertzen dela, eta ez soilik hitz hasieran. Nolanahi ere, hitz hasieran ez den lekuan bokal soil gisa agertzen den kasu bakarra da, gainerakoetan diptongoaren bigarren elementua da: *ayta* (*passim*), *baytago*, *bayta*, *erreynua*, *dizquigueney* (1v), etab. Hitz hasieran <y> bokalikoa arrunta da: *yguçu* (1v), *yrurgarren*, *ygo* (2v). Kontsonanteen grafiari dagokionez, <e> eta <i> bokalen aurretik <c> zein <ç> biak agertzen dira: *esperançea* (1v), *guçiz*, *çeruaren*, *ceyn*, *cen*, *bicien* (2v), etab. Zenbaitetan, gainerako bokalen aurrean <c> *pro* <ç> egiten da, besteak beste ondokoetan: *cuen* (*passim*), *gaiçacu*, *eriocaco* (1v), *cazpiac*, *cutela* (3r). Inoiz edo behin, txistukari afrikatuak markatzeko ahalegina egiten da: *Jautsi* (2v), *vicitce* (2v), *sinestatcea* (3r), *iuzgatcera* (3r); nolanahi ere, ozenen ondoren beti agertzen da frikariari dagokion grafema. Ahoskatzen ez den <h> etimologikoren bat bada: *humanidade*, *humanidadeac* (3r); baita hitz hasierako *u*-ren balio bokalikoa islatzeko erabiltzen denik ere: *hume* (1v). Ezin jakin, hala ere, *ohec* (3r) adibideko <h> hori ahoskatzen ote zen (cf. § 3.1.2.1). Oro har, <gu> erabiltzen da herskari ahostun belarra islatzeko <e> eta <i> bokalen aurretik, baina <gue> osorik ahoskatu behar da *dizquigueney* (1v) adibidean.

Grafiarekin amaitzeko, idazkera etimologikoetarako joera nabari da: *et* (*passim*), *Spiritu* (*passim*), *sanctu* (*passim*), *peccatuen*, *ressurrectioagan* (1v), baina *resurrecioan* (2v), *aduogada* (1v), *defunctuen* (2v).

Fonologiari dagokionez, batetik, *çaodena*, *gaode* (1v) aldaera hiatodun zaharrak ditugu; hala ere, *çaudena* (6r) ere badugu. Bestetik, **edutzi* batetik datorkeen

---

738 Jaungoico] esk. *jaungoco.*

739 ma] Testuak jarraitu egiten duela dirudi. Orriaren beheko ertzean testuaren jarraipenaren aztarnak ikus daitezke; beraz, badirudi orrialdearen beheko aldean moztu zutela liburua enkoadernatzean eta, horren ondorioz, azken lerroa(k) galdu d(ir)ela.

740 bedi] *b* letrak *u* baten gainean idatzita dirudi.

741 çure] esk. *cure.*

742 guere] esk. *geure.*

743 […]tic] *ayçitic* izan liteke falta den hitza.

*juci* (Iv) eta *jutci* (6r) aldaera diptongoduna dugu, ez *utzi* monoptongoduna. Bestalde, **j* zaharraren ahoskera sabaikaria bide da: *ya[...]*, *iuzgacera* (Iv), *iuezaren* (2v). Sabaikaritzeei dagokienez, *l*-ren palatalizazioa dago, baita hitz amaieran ere: *illen* (Iv), *glorificaçaillea* (3r), *ill cela* (3v) (baina *il çuen* (2v)). Aldiz, *n*-ren palatalizazioaren arrastorik ez dago, grafikoki bederen: *sinesta-/sinista-* (*passim*), *uirgina-*, *erreynua* (Iv), *bayno* (3r). Kontsonante multzoei dagokienez, *-st-* egiten da: *beste* (3r).

Izen morfologiaz den bezainbatean, objektu mugagabearen adibide bat aurkitu dugu: *ya[...] erioça et passio* (1v). Bestalde, artikulu hurbila ongi lekukotzen da: *becatarioy*, *desterratuoc*, *veguioc* (Iv). Instrumentalean *-z* aldaera bizkarkaria da nagusi: *sentençiaz*, *graciaz*, *misericordiaz* (Iv); aldiz, *-s* apikaria duen adibide bakarra dugu: *gucis* (3r). Bizidunen inesiboaren marka *-gan* da: *jaunagan*, *catholicoagan* (Iv), eta bizidunen ablatiboan *-ganic*: *virginaganic* (Iv), *Mariarenganic* (2v), *Mariaganic* (3r). Ablatiboan *-rika* aldaera erabiltzen du: *gaiçetarica* (Iv), baina *-tik* ere badago: *ertetic* (Iv), *artetic* (2v). Izenordain posesiboetan *guere* (*passim*) gisako aldaera monoptongodunak ditugu.

Aditz morfologiari dagokionez, aditz izenetan forma zaharrak mantentzen dira; batetik, *-iten* dugu *emayten* (Iv) adibidean eta *-te* dugu *erortera* (6v) adibidean. Bestalde, adizki trinkoak ditugu: *betor*, *iguçu* eta *viz* (Iv). *Izan* aditzaren iraganeko erroa *-e-* da, *baiçen* (Iv), *jautsi cen* (2v), baina halaber *jayo çan* (Iv) ere badator. Orainaldian *-a-*, *çarade* (Iv) eta *-e-*, *cerade* (Iv) agertzen dira; eta adibidetan ikusi daitekeenez forma pleonastikoak ditugu. Bestalde, **edun* aditzari dagokion erroa *-u-* da: *duenaren* (Iv), *dut* (*passim*). Halaber, **edun* aditzarekin *-e-* pluralgilea erabiltzen da: *çuen* (*passim*) 'zuten' baina behin *çutela* (3v). Gainera, NOR-NORI-NORK sailean *-i(n)-* erroa erabiltzen da, eta ergatiboari dagokion pluraleko marka *-e* da, ez *-te*: *eguiten dizquigueney* (Iv). Horrezaz landara, NOR-NORI-NORK sailean *-i(n)-* erroko *diezcun* 'dizkiegun' (Iv) ere agertzen da. Hor ikusten denez, NOR pluralgilea *-z-* da eta datibo komunztaduraren ondotik jartzen da. Bestalde, irrealetan **ezan* aditzaren *jazquiguçu* 'iezazkiguzu' (Iv) gisako adizkiak ditugu. Adibide horietan ikus dezakegunez, NOR-NORI-NORK sailean pluralgilea *-zki-* da. Gainera, adizkiaren hasierak **ezaz-* > **eaz-* > **iaz-* > *jaz-* bilakabidea izan du, txistukarien disimilazioa, hasierako bokalaren ixtea eta haren palatalizazioa ditugularik, hurrenez hurren. Sail berean, *egin* ere erabiltzen da: *erregutu eguiozu*, *eracusi eguiguçu* (Iv).

Horrezaz gain, indikatiboaz bestelako moduetan aditzoina erabiltzen da *-tu* amaieradun aditzekin: *sanctifica bedi*, *cumpli bedi*, *barca iazquiguçu*, *converti içaçu*, *çaquizgula valia* (Iv); aldiz, partizipioa *-i* amaieradunekin: *ezcaiçaçula juci* (Iv), *etorri bedi*, *ezcayçaçula jutci* (6r); jakina, *egin* laguntzailearekin ez da aditzoina erabiltzen: *erregutu eguiozu*, *eracusi eguiguçu* (Iv).

Sintaxiari dagokionez, TO-GEN egitura erabiltzen da: *viçien eta illen iuzgacera* (Iv). Konpletiboetan *-ela* eta *-ala*, bi aldaerak daude: *çuala* (Iv) eta *çela* (Iv). Linschmann-Aresti legeaz den bezainbatez, batzuetan betetzen dela dirudi: ***iguçu*** *egun* ***guere*** *eguonorozco oguia*. *Barca* ***jazquiguçu guere*** *peccatuac, guc* ***guere*** *contra eguiten* ***dizquigueney*** *barcaçen diezcun beçala* (Iv). Dena den, salbuespenik bada: *converti* ***içaçu çure*** *misericordiazco veguioc gugana*, *Çuri emayten* ***diçugu gure*** *negarra*; *Eracusi* ***eguiguçu gure*** *erioçaco orduan* (Iv). Bigarren aitagurean arestikoen pareko esaldietako batean

legea ez da betetzen: ***Gure*** *egunoroz[co ogu]ia* ***iguçu*** *egu[n]* (6r); bestean, ordea, *Barca* ***iazquigu[çu] guere*** *çorrac g[uc] barcaçen* ***dizte[gun]*** *beçala* ***guere*** *ç[ordu]ney* (6r). Galdetzaile batez hasitako mendeko perpausetan *bait-* konplementatzailea erabiltzen da: *non baytago*, *nondic etorrico bayta*, *nola bayta* (Iv), *ceyn concebitu baitçen* (2v), etab.

Gehienetan [izenlaguna + izena] hurrenkera agertzen bada ere, adibide batean [izena + izenlaguna] egitura dugu, *aita gurea* arruntagoaz gain: *advogada gurea* (Iv), *gloria Paradisuco* (3v).

Lexiko aldetik goi-nafarrerazko ohiko aldaerak diren *ertetic*, *ertean*, *podore* (Iv), *escuieco* (Iv 2r), *escuian* (3r), *bedicatua* (Iv) agertzen dira. Esan dezagun, bide batez, *erte*-kin batera, *arte* ere badagoela testuan eta Nafarroako iparraldeko *erte* bakarra da Aresoko otoitzetan duguna. Gainera, *sinistaçen*, *sinistacen* (Iv), *sinistacea* (3r) agertzen dira, eta *OEH*ren arabera (s.v. *sinestatu*) *sinistatu* Larraunen eta Gipuzkoako nafarreran agertzen da. Hala ere, *sinestacen* (Iv), *sinestacea* (3r) ere agertzen dira testu honetan. Bestalde, *erreguia* (Iv) aldaera erabiltzen da 'erregina' adierazteko; *OEH*ren arabera (ik. s.v. *erregina*), Landuccik aldaera bera darabil, baita Beriainek eta Lazarragak ere: *Erreguia Portugalecoa doña Isabel izandu cen Iaungoycoaren ceruizari andia* (Ber*Meza*). Hegoaldeko testuetan lekukotzen den *eren* 'hirugarren' bakanetakoa dugu hemen (Iv), *Lenaengo andrea da emazte, bigarrena seniquide, arena gach ta calte* (*RS* 376) adibidearekin batera. Atzizkiei dagokienez, izenetan *-tze* eta *-tza* aldaerak agertzen dira *esperançea* (Iv), *vicitce* (2v), baina *viçiça*, *erioça*, *erioçaco* (Iv).

Zuazok (2008: 134) Aresoko hizkera erdialdeko euskararen eta euskara nafarraren arteko zubi hizkeratzat hartu bazuen ere, aurkeztu ditugun otoitz horietan goi-nafarrerari dagozkion ezaugarriak aurki daitezke; esaterako, *ertetic*, *bedikatu* eta *sinestatu* aldaera nafarrak ditugu lexikoan. Halaber, instrumentaleko aldaera apikaria agertzen da, bizkarkaria nagusitzen bada ere.

Ikusi dugunez, lexiko aldetik goi-nafarrerazkotzat har daitezkeen hitzak daude, baina agertzen diren hainbat ezaugarri sintaktiko erdialdeko euskaratik gertuago daude: *yaunagan*, *catholicoagan* eta inoiz ez *baitan* —hala ere, hau bere izaera arkaikoari egotz dakioke—; *ezcaiçaçula juci erorçen* eta ez *erorçera*. Baina 6r-ko aitagurean *ezcay[ça]çula iutci te[ntaci]oan erortera*. Bestalde, NOR-NORI-NORK saileko *-te* pluralgile berritzailearen ordez *-e* zaharragoa dugu.

### 2.3.2. Katixima zatiak

Osorik ez, baina zatika iritsi zaigun katixima zahar baten lekukotasuna dugu goi-nafarreraz. Zati horiek 1614an Armendariz lizentziatuak Carlos Labaiengoaren inprimategian argitaratutako *Recopilación de todas las leyes del Reyno de Navarra* liburuaren azalean erantsirik ailegatu dira gugana. Salaberri Muñoak (2006: 856, 3. oin-oharra) azaltzen duenez, garai hartan ohikoa zen inprimategian sobratutako eta baztertutako materiala erabiltzea koadernaketak egiteko. Katixima honen zatiak horren adibide dira. Koadernaketa 1614koa denez, pentsa daiteke katixima XVI. mende akabukoa edo XVII. hasierakoa dela. Nolanahi ere, ez bide da Antso Eltsokoarena (Irigarai 1963c: 249).

Zatika heldu arren, Antso Eltsokoarena aurkitu bitartean, ezagutzen dugun goi-nafarrerazko liburu argitaratu zaharrena da eta, dakigula, argitaratu zen bigarrena, Eltsokoaren ondoren eta Beriainen aurretik. Salaberri Muñoak (2006: 857) dioenez, liburua tamaina txikikoa zen, 14 × 9 cm eredutik hurbilekoa, «txikia, merkea, erabilgarria».

Angel Irigaraik (1963c) eman zituen zatiok ezagutzera, lehen aldiz, fotograbatuekin. Ondoren Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.8) testuaren edizio berri bat argitaratu zuen, «garaiko katiximen eta kartillen ohiko hurrenkera jarraituz». Beranduago, Salaberri Muñoak (2006) beste edizio bat egin zuen, Sarasolak transkribatu gabe utzi zituen zatiak eta gaztelaniaz idatzitakoak gehiturik. Bestalde, Oroz Arizcurenek, karaktereetan oinarriturik, berresten du ezin dela izan Eltsokoaren dotrinakoa eta iradokitzen du dotrina horretatik ateratako kartilla batekoa izan zitekeela (1980: 16-18). Sarasolak, berriz, Oroz Arizcurenen proposamena jaso zuen, oraindik artikulua argitaratu gabe zegoelarik (*ConTAV* § 5.2.8). Horrezaz landara, Oroz Aricurenek (1980, 27. oin-oharra) katixima zati hauetan agertzen den aitagurea Hervásek jasotakoarekin erkatzen du. Ez du aipatzen Hervásek jasotako bertsio hori noizkoa den, baina Hervásen garaikidea izan daiteke, xviii. mendearen bigarren erdialdekoa, alegia. Hizkuntza-ezaugarriei begiratzen badiegu, datiboan *zorgaituztem erì* agertzen da, eta halakoak xviii. mendetik aurrera lekukotzen dira (§ 3.2.1.8). Zulaikak (2014) esaten duenez, ez du aitagure horren paralelorik aurkitu testu idatzi nafarren artean, Beriainen antzekoa den arren. Hori dela eta, ondorioztatzen du Hervási nafar jesuita erbesteratu batek jakinarazi ziola.

Hona dakargun edizioa egiteko Irigaraik (1963c) argitaratu zituen argazkiak baliatu ditugu, baina baita Sarasolaren eta Salaberri Muñoaren edizioak ere irakurketak zein hurrenkerak berresteko eta antolatzeko. Kasu batzuetan, letra etzanez osatu ditugu izenburuak.

### *2.3.2.1. Testua*

[*Pater noster*]
[… ]udena, santifica bedi
[…]di çure erreynua. E-
[…] ceruan beçal[a] [l]urrean
[…] eman draçaguçu egun
[…] çorrac, guc barcat-
[…]rduney. Eta ezcayt-
[…]era; aytcitic, begui
[…] Amen.

[*Ave Maria*]
Iangoyco[…]
tea, Iaun[…]
teen artea […]
fructua, Ies[…]
otoytç eguiçu gu becatariengatic or […]
re eriotçeco orduan. Amen.

Credoaren oracio onec […]
stioari si[…]
çeyñetan b[…]
culo fedezc[…]

[*Kredoa*]
Sinestatcen dut Iangoyco ayta gu[…]
soan ceruaren eta[744] lurraren creadore[…]
Iesu Chri[…]me bacoyt[…] ceña
Iaunar[…]n concebi[…] bay […]
[…]n obraç: iayo çen Virgina Maria-
[…]aric: passatu çuen passio[745] dolorezcoa
[…] Pilato juezaren az[…] crucificatu çen
[…]tçi çen, jautssi çen […]etara, irurga-
[…]ean illetaric resuscitatu çen, igan çen
[…] eta jarriric dago Iangoyco ayta po
[…]n escuñean: nondic etorrico bayta
[…]itçien juzgatç[…]nestaçen dut Es-
[…]dua baytan, E[…]ndu catholican,
[…]omunioan be[…]ioan, ge[…]
[…]ulaco […]

[*Salve*]
[…]perança Iangoycoac salva çayç[…]
[…]yeç gaude Evaren […]
[…]na gaude suspiraç a[…]
[…]lle nigarrezco onet[…]
[…] çure begui misericor[…]
[…]regana eta desterru […]
[…]guçu Iesus çure sabel[…]
[…] O, clementea, o […]
[…] Maria. Amen.

[*Artikulu fedezkoak, dibinidadezkoak*]
[…]dua […] Ayta, Semea eta Espiritu Sandua,
[…] dira […]goyco bat eta irur persona.
Bortçgarren[a],[746] [si]nestacea Iaungoycoa dela
Ceruaren eta [l]urraren creadorea.
Seygarrena sinestacea dela salvadorea.
Çazpigarrena sinestatcea[747] dela glorific[…]

---

744 eta] <t> ez da ongi ikusten
745 passio] erdi lausoturik ikusten da.
746 Bortçgarrena] jatorrizkoan *bortc-* dator.
747 sinestatcea] bigarren <t> behar lukeen lekuan zuloa dago.

[*Humanidade sanduarenak*]
Zazpigarrena sinesta[…]
dela illen eta […]en j[…]
fede sandua beguiratu […]
dueney emateco parad[…]
Eta gayztoey aren fe[…]
tu eta obratu […]uteney […]
diraden sec[…]o penac.

[*Lege sanduaren mandamentuak*]
[…]egue sanduaren
[…]entuac
[…]nduaren mandamentuac, Chris
[…]ratu bear duenac.
]en legue sanduaren manda-
[…]entuac [.]mar dira.
[…]gauça gucien gañean Iangoy-
coa onetssi dezagula.
[…]amenturic vanoro eztaguigula.
[…] igandeac eta jayac beguir[.]
[…]
[…]yta eta ama onrra ditça[…][748]
[…]garrena, iorr i[.] etzt[…]
[…]
[…]igarrena ior[…]
[…]trazogula.
[…]gula.
[…]rena, la[…]
[…]ula.

Amarr mandamentu sandu onec encerr[…]
cen dira bida[t]an, Iangoycoari gauza […]
cien gañetic oneriçtean: eta gueuren […]
ximo laguna gueuren buruac bezala.

[*Elizaren mandamentuak*]
[…] eta jayetan meça osso-
[…]
[…] urtean beyn confessatcea
[…] be cu denpo[…]
[…]eligroan dago […]
Irur

[748] ditça[…] jatorrizkoan *ditca-*.

[*Zehaztugabeak*]
[…]ear dituzten
[…] Iaungoycoaren lau […]

[…]cioDo
[…]tcen jaqui-
[…]sun espiri-
[…]yzquionac.
[…]

*2.3.2.2. Iruzkina*

Grafiaz den bezainbatean, afrikatuak eta frikariak bereizten dira; <tss> eta <ts> erabiltzen dira apikarirako eta <tc> eta <tç> bizkarkarirako: *aytcitic*, *otoytç*, *eriotçeco*, *sinestatcen*, *jautssi*, *juzgatç[…]*, *bortcgarren*, *sinestatcea*, *obetsi*, *ditca[…]*, *cofessatcea*, eta, ziurrenik, *barcat[…]*, *ezcayt[…]*, *bacoyt[…]*. Dena dela, bada salbuespenik: *[…] nestaçen*, *çayç[…]* ziurrenik 'zaitzala', *[..]nestacea*, *sinestacea*. Ozen ondotik ez da grafikoki bereizketa beti egiten *concebi[…]*, *[…]perança* adibideetan, baina mailegu garbiak direlako izan liteke, *bortçgarren* baitugu. Azkenik, grafia kultuaren eragina duke *fructua* adibideak.

Fonologian, bokalekin sinkopa gertatu dela ikusten dugu *draçaguçu* eta *[…]trazogula* adibideetan. Kontsonanteetan, **j*- zaharra sabaikaria dela dirudi: *Iaun Iangoyco*, *iayo*.

Izen morfologia aldetik, artikulu hurbilaren adibide da ondokoa: *becatariengatic*. Ezezko polaritatea duen *ior* izenordaina agertzen da, hegoaldeko goi-nafarreraz ohi den bezala. Bestalde, *gueuren* posesibo pleonastikoa lekukotzen da. Instrumentalean aldaera bizkarkaria erabiltzen da: *obraç*, *suspiraç* eta ziurrekin *[…]yeç* (*deyeç gaude* berreraikitzen badugu). Ablatibo pluralean *-etarik* zaharra mantentzen da: *illetaric*. Bizidunen kasuan, *baita-* erabiltzen bide da, *[…]dua baytan* adibideak erakusten duenez.

Aditz morfologian, *egin* aditzaren jusibo trinkoa agertzen da: *eztaguigula*. Horrez gain, ezaugarri garrantzitsua da indikatibotik landako NOR-NORI-NORK sailean **erazan* laguntzailea erabiltzea: *eman draçaguçu* eta *[…]trazogula*. Ezaugarri horrek erakuts dezake liburua hegoaldeko goi-nafarreraz idatzia dagoela. NOR-NORK sailean **ezan* dugu: *dezagula*. Halaber, indikatibokoak ez diren perifrasietan, aditzoina mantentzen da *-tu*-z amaitzen den aditzekin; *-i*-z bukatzen diren aditzekin, ordea, partizipioa dugu: *santifica bedi*, *onrra ditca[…]*, *obetsi dezaçula*.

Sintaxiaz den bezainbatez, TO-GEN egitura dagoela dirudi: *[…]itçien juzgatç[…]*, *illen eta […]en j[…]*. Bestalde, aipatzekoa da pasiboak adierazteko era: *crucificatu çen*, *[or]tçi çen* (cf. Zannettiren *crucificatu ucandu sen*, *il eta orsi ucandu sen*).

Amaitzeko, lexikoan *eriotçeco* ekialde zabaleko aldaera eta *sinestatu* aldaera nafarra ditugu.

### 2.3.3. Leitzako apaizaren kontrako auzia

Bi testuok Leitzan 1626an idatzi ziren, bertako apaiz izendatu berriaren aurkako auzia zela eta. Zehazkiago esanda, Erromako Rota auzitegiak emandako agindua jasotzen da bi testu hauetan.

Satrustegik (1987: 45) kontatzen duenez, 1626an Iruñeko gotzainak Valcarlos abizeneko apaiz bat izendatu zuen Leitzako erretore. Erroman lanpostua izan arren, Martin Alduntzin postu horren atzetik zebilen. Hori dela eta, bidegabekotzat salatu zuen Alduntzinek Valcarlosen izendapena. Dena den, dirudienez, garai hartan herriko artisauak izan ohi ziren apaiza aukeratzen zutenak, ez gotzaina. Horregatik piztu zen gatazka, eta Alduntzini ez bide zitzaion zaila egin indarrak bere alde jartzea, eta auzia irabaztea. Ondorioz, Valcarlosi isun gogorra jarri zioten, baina ezin ordain zezakeenez, ihes egin zuen. Ihesaldi haren karietara, apaizaren aurkako auzi-agiria zabaldu zuen Matheo Burato izeneko epaileak.

Euskarazko bi testuak gaztelaniazkoaren itzulpenak dira; hona hemen gaztelaniazkoak dioena:

> Estas son unas letras appostólicas, emanadas de la sacra Rota de su santidad, en que por una sentencia de ella se manda quitarle la posessión de la abbadía desta iglesia y lugar de don Martín de Balcarlos, que la obtubo por sentencia en primera instancia dada por el señor probisor y vicario general deste obispado, y se manda poner en ella a don Martin de Alduncin presbítero, como a presentado por la mayor parte de los patrones, y que se le acuda o a su procurador con todos sus frutos, diezmos y otras cossas a ella perteneçientes, y le condena en costas al dicho don Martin de Balcarlos, y haviéndose presentado ante el señor official principal deste obispado las dichas letras appostólicas, juez delegado appostólico las manda poner en la execución conforme a su thenor so pena de excomunión y de ducientos ducados, inibiendo a cualesquiera personas a que no lo inpidan, y reserba en sí o en su superior solamente la absolución de ella. Ago esta publicación y las afixaré en las puertas principales desta iglesia para que a todos conste de ello y advierto que le está dada a su cuenta del dicho D. Martín de Alduncin legítimamente la dicha posesión (2r).

Egun euskarazko itzulpenaren bi bertsio ezagutzen dira, eta biak Iruñeko Elizbarrutiko Artxiboan daude, gertakaria jasotzen duen C490, 2. zk. prozesuan. Agiriko orriek bi zenbakuntza dituzte, josirik dauden orriak eta josi gabe daudenak bereizteko. Josi gabeek orrialde zenbakia parentesi artean dute, eta gure idatzi hauek bertan daude 1r eta 2v orrialdeen bitartean. Gaztelaniazko jatorrizkoa ere bertan dago.

Testuok Satrustegik artikulu batean eman zituen ezagutzera lehenik (1978-1979: 235-238), eta *Euskal testu zaharrak I* bilduman berriro jaso zituen. Guk jatorrizkoak ikusteko aukera izan dugu eta bertan oinarriturik prestatu dugu geure edizioa, nahiz eta Satrustegirenarekin (S) erkatu dugun.

### *2.3.3.1. Testuak*

> <1r> Ohec dirade letra apostolico baçuec, executorialeac, probeituac Matheo Burato jaunac; jueza Aita Santuac señalatua Sacra Rotaco[749] erri onetaco abbadiaco auçiagatic, çeña[750] baitarame bachiller D. Martin de Alduncin

[749] jueza Aita Santuac señalatua Sacra Rotaco] egitura bitxia du esaldiak, beharbada, *Sacra Rotaco juez Aita Santuac señalatua* beharko luke. Bigarren agirian *Sacra Rotac aguinduac* agertzen da, baina ik. horri dagokion oharra.

[750] ceña] amaieran *-c* tatxaturik dago.

eta[751] D. Martin de Valcarlosen artean. Aguinçen[752] du juezac paga dizala D. Martin de Balcarloshec bachiller Aldunçini edo haren procuradoreari amaborz egunen barrenean borzetan eun eta berroguey eta amalau erreal alde batera eta verroguei eta amar ezcutu, amarna erralecoric, eta gueyago sey ezcutu moneda veretic. Gustiac causa eta razoe expresaçen diranengatic letretan, eta gueyago pagatu bear ditu justamente çor dituen costuac. Aperçebimenturequin pagazen ezpaditu termionetan,[753] prozedituco dela aren persona presso arzera eta aren aziendac eta rentac consignazera <1v> eta secrestazera, eta ahec saldu eta pagu eguitera. Recrezicen dirade derecho[754] eta costu guztiequin. Eta zerren eguin ditudan diligencia neçessarioac Iruñean eta emen[755] notificazeco letra oec vere personan, eta ezin aurquitu dudan, eguiten dut publicaçio au eliza onetan[756]. Eta iminico dut letrac eta trasladua eliza onen ateari erasidich,[757] guztien notorio den eta datorren[758] abbadearen notiçiara. Eta gueyago aperçebiçen dut emanen diodala trasladu fede eguiten duena, escazen duten personaei emateco noticia abbadeari.

<2r> Ohec dira letra apostolico[759] vaçuec, Sacra Rotac[760] aguinduac, çeñac vaitira sentencia vat atra içandu dena[761] Don Martin de Valcarlosen contra eta bachiller Don Martin <2v> de Aldunçinen favorez, ceñec aguinçen baitu edequi daquiola possessioa abbadia eliza onetacoa[762] D. Martin de Valcarlosi eta eman daquiola bachiller D. Martin de Aldunzini, vere amarren eta vezte gauza guztiaquin, excomecaçioaren penaren azpian eta verreun ducaten penan. Edequizen eta errebocazen dioe D. Martin de Valcarlosen favorean, atera[763] zen sentencia lendabiçico instançian. Letra apostolico oec pressentatu izandu dira offiçiale[764] jaunaren[765] aurrean[766] juez apostolico[767] negocio onetaco, ceñec aguinçen baytu guarda dadila[768] emen essaten duen guztia eta condenezen du costu guztietan[769] D. Martin de Valcarlos. Eta eztiazola eragozi niorc.

---

751 eta] lerro artean gehitua.

752 Aguinçen] esk. *Aguinçen* : S *Aguincen*.

753 termionetan] esk. *termionetã*. Uler bedi ‘termio onetan’, alegia, ‘epe honetan’.

754 derecho] lehenengo <e> lerro artean gehitua.

755 Yruñean eta emen] lerro artean.

756 onetan] esk. *onetã*.

757 erasidich] <s> tokatzen den lekuan aurretiaz beste hizkiren bat bide dago jarria —<z> izan liteke— eta ondoren tatxatua, baina ez da garbi ikusten zer den; <s> bera ere ez da garbi ikusten. Sk ere *erasidich* dakar.

758 datorren] esk. *datorrẽ*.

759 apostolico] esk. *Ap*$^{co}$.

760 Rotac] esk. *Rota* : S *Rota*. Testuinguruagatik ergatiboa behar luke.

761 içandu dena] esk. *içandudena* : S *içan dudena*.

762 abbadia eliza onetakoa] lerro artean.

763 atera zen] esk. S *atreazen.*

764 offiçiale] esk. *offiçiale* : S *officiale*.

765 jaunaren] esk. *jaunar*ẽ.

766 aurrean] esk. *aurreã*.

767 apostolico] esk. *Ap*$^{co}$.

768 guarda dadila] esk. *guardadila*; ziurrenik haplografiaz.

769 guztietan] esk. *guztietã*.

Eta erreserbazen duela verezat edo vere superiorearen[770] onen absoluçioa. Eta, ala, adbertiçen eta assegurazen dut dagola arturic ongui possessioa bachiller D. Martin de Aldunzinen partes. Eguiten dut publicacio au eta[771] iminico ditut[772] elizaco atarietan, letra hoec guztiei notorio den.

### *2.3.3.2. Iruzkina*

Grafiaz den bezainbatez, testuan diren <h>-ek ez dirudi balio fonologikorik dutenik: *ohec* (*passim*), *haren* (1r), *ahec* (1v), baina *oec* (*passim*), *hoec* (2v). Bestalde, zenbait kasutan bokalak <~> diakritikoa darama ondoko kontsonante sudurkariaren ordez: *jaunarẽ* (2v), *aurreã* (2v).

Fonologia aldetik, bokalei dagokienez, *atra* (2r) adibideak erakusten du sinkopa gertatzen dela, baina *atera* (2v) ere badago. Dena den, jatorrizkoan *atreazen* agertzen da. Kontsonanteei dagokienez, *-r(t)z-* multzoa mantentzen da: *amaborz, borzetan* (1r), baina *vezte* (2v) dugu kasu batean. Maileguetan *executoriale* (1r), *offiçiale* (2v) ditugu, *-ale* bukaerarekin; gainera, lat. *-tione -oe* dugu *razoe* (1r) adibidean.

Morfologian, zenbatzaileetan *borzetan eun* (1r) gisako egitura agertzen da. Bestalde, ezezko polaritatea duen *niorc* izenordaina dugu. Instrumentalean aldaera apikaria dago: *partes* (2v). Aditz morfologiara pasatuz gero, *içandu* (2r) partizipio pleonastikoa aurkitzen dugu jokatugabeetan. Aldiz, jokatuetan *dirade* (1r, 1v) eta *diranengatic* (1r) aldaera pleonastikoa eta arrunta ditugu. Trinkoen artean subjuntiborik bada: *guztien notorio* ***den*** *eta* ***datorren*** *abbadearen notiçiara* (1v), *guztiei notorio den* (2v). **Edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da: *eguiten dut*, *iminico dut* (1v). Pluralgileei bagagozkie, *-e* erabiltzen da trinko zein laguntzaileekin: *baitarame* 'baitaramate' (1r), *errebocazen dioe* (2v). Indikatibotik landako perifrasietan aditzoina erabiltzen da: *paga dizala*. Eta adibide horrek erakusten duenez, datibo komunztadura ez da nahitaezkoa: *paga dizala D. Martin de Balcarloshec bachiller Alduncini edo haren procuradoreari* (1r). Beste adibide hau ere badago: *guztiei notorio den* (2v), baina *eztiazola eragozi* (2r). Azken adibide horretan ikus dezakegunez, indikatibokoak ez diren NOR-NORI-NORK saileko erroa **ezan* da, baina adizkietan *-i-* datiboaurrekoa dugu erroaren aurretik. Behin objektu pluralaren komunztadura ere falta da: *iminico dut letrac eta trasladua* (1v).

Sintaxiaz den bezainbatez, [izen + erlatibo] hurrenkera dugu behin: *causa eta razoe expresaçen diranengatic*, baina jarraian *çor dituen costuac* (1r) dugu. Kausazko perpausen artean, *zerren egin ditudan* (1v) agertzen da, eta erlatibozkoetan *çeñac vaitira* (2r), *çeñec aguinçen baitu* (2v).

Lexiko aldetik aipatzekoa da *essaten* (2r) agertzea, aldaera hori Nafarroako ipar-mendebaldean erabiltzen baita. Horretaz landa, gaztelaniazko *puerta* hitzaren euskarazko bi ordain ageri dira: *ateari* (1v) eta *atarietan* (2v). Ekialde zabalekoak den *edequi* (2v) aditza dago. Azkenik *termio* (1r) agertzen da, «epe» adierarekin.

---

770 superiorearen] S *superiorearen (zat)*. Ondoan zerbait tatxaturik.

771 eta] aurretik zerbait tatxaturik.

772 ditut] <tut> lerro artean, lerroan tatxatuaren gainean.

Satrustegik (1987: 46) dioenez, auzi-agiria denez hizkera espezializatua du eta kaleko jende arruntarentzat zail izan zitekeen ulertzea, besteak beste, zenbait termino, hala nola *executorialeak* (1r), *consignazera eta secrestazera*, *aperçebiçen* (1v), *errebocazen* (2v). Horrezaz landara, beharbada itzulpenak eragindako hurrenkera ezohiko bi aurkitu ditugu: *jueza Aita Santuac señalatua Sacra Rotaco* (1r) eta *juez apostolico negocio onetaco* (2r).

### 2.3.4. Berako olagizonaren gutunak

Beheko hiru gutunak Berako Juan Bautista Iturria olagizonak idatzi zituen eta egun Nafarroako Artxibategi Nagusian gordetzen dira, auzi baten dokumentazioaren barruan (228596 zenbakiduna), auzi-jartzaileak gutunetako letra eta auzigai zen zamari baten zor-agirikoa esku berarenak zirela —J. B. Iturriarenak alegia— frogatzeko emanak.

Hiru gutunak J. B. Iturriak Ziburuko Juantxo Bereauri idatzi zizkion, lehena 1674an eta beste biak 1676an. Urte horretan bertan Iturria Cadizera joan zen, Ameriketara aldatzeko asmoz, bere hartzekodunengandik ihesi.

Gutunok Urrizolak (2006) eman zituen lehenengoz ezagutzera testuaren testuinguru sozioekonomikoarekin, Iturriatarren historiarekin eta gutunen argazki eta transkripzioekin. Badarik, Urrizolaren edizioa ez dator beti gurearekin bat. Orrialdeen zenbakikuntza gutunetan bertan, goiko eskuineko ertzetan, agertzen diren zenbakiei dagokie eta, bistan da, ez dator bat hurrenkera kronologikoarekin.

Iruzkinean, adibideen ondoan agertzen diren zenbakiek gutun bakoitzari eman diogun zenbakiari egiten diote erreferentzia, ez eskuizkribuko orrialdeari.

#### *2.3.4.1. Testuak*

1. 1674-05-28

<9> [*gurutzea*]

S. Juancho[773] de Bereau

Ene jauna: Errezevitu ditut lauetan oguey eta lau[774] errugu baba bidaldu ditidazunac, eta oray or duaz cembait mandazay. Eztaquit cembat, boronte baduzu, cargatucera aguinduco tuzu eta bertzeac bezala memoriaz emanen tidazu mandazañaquin;[775] Leon de Irazoqui edo Pedro[776] de Ezponda or izaiten badira, etaric batequin edo equin faltan berze edozeñequin. Edireiten bazara dispossicionetan, otoi eguiten dizut cargaco borz sos, bear baitituzte Urtubiaco drechoaren pagatceco, an ichura gaitzean erabil eztizaten. Eta barca diazadazu escrivizeco modo gaitzaz, bañon escussatuba naiz ceren ezpaitugu guc escrivicen ussatzen uscaraz. Jeincoac dizula ossasuna eta consueloa[777] cere

[773] Juancho] esk. *Ju*$^{n}$*cho*.

[774] lau] lerroartean idatzia; lerroan *Çorzi* tatxaturik.

[775] mandazañaquin] esk. *mandazanaquin*; bigarren <n>-ren gainean puntu bat dago, baina ez da batere ziurra diakritikoarena egiten duenik, gutuneko gainerakoetan <ñ> argia agertzen delako.

[776] Pedro] esk. *P*$^{o}$.

[777] consueloa] hemendik aurrerakoa ezkerreko ertzean goitik behera idatzita dago.

echatiar guztiarequin,[778] orrelaco travajuen artean, eta guarda çaizala gaizetaric. Bereau y mayo 28 de 1674.[779]

Zure servitzaria,

Juan Bautista de Iturria[780]

2. 1676-06-14

<7> [*gurutzea*]

S. Juan[781] de Bereau

Ene yauna: Obligacione[782] forzoso bat ofrecituriq obligatu naiz propio onen bidalçera arras onetan, ceren biar falta gave bear bainaiz ediren amar orenetaco Echalarren obligacione batean eta dembora gueyago eç izanez erran dudana baño. Eta aste onetan caviguña aussiriq bi egun galdu ditut, ceñeq guibelatu bainaute oray artean. Eta, ala, otoy egiten derauçut eguin deaçadazun favore egorceaz bi eun erreal diruriq (berce aldi batean falta izanen badezu) eta dozena bat errugo ogui eta baba. Eta otoy eguiten dizut despacha detzatzun arren laster, cergatiq biar çazpi orenetaco ediren bear dute Beran. Zure serbiçaria. Yeincoac beguira çayzala[783] gaizetariq. Beran eguiña, junioren 14 de 1676.[784]

Juan Bautista de Iturria[785]

3. 1676-06-23

<5> [*gurutzea*]

Ene yauna: Ola atzo gaizquituz,[786] bidalcen dut burdinariq gave cembait ogui eta babaren esque. Otoy eguiten diçut egor diezadazun eta carga bat zarrin dirua eman deozaçun carta onequin eldu denari, eta, erran nerauzun bezala, baldin baderitzazu, assentatuco dituzu baba eta oguia berze contuban aparte berce olaracoz. Eta, bidalcen dizudanean burdiña, len zor dizudanaren alderat ecarcen duben[787] baba edo oguiaz ganiracoa asentatuco diozu. Jeincoac dizula ossasuna çure echatiar guztiarequin. Beran eguiña, junioren 23 de 1676.[788]

Zure servitzaria,

S. Juancho de Bereau Juan Bautista de Iturria

---

[778] guztiarequin] gutun osoan buztanik ez duen <z> bakarra du.

[779] 28 de 1674] eguna eta urtea azpimarraturik daude.

[780] Iturria] ondoan errubrika darama.

[781] Juan] esk. *Ju*$^{n}$.

[782] Obligacione] esk. *Obione*, laburduraz.

[783] çayzala] hemendik aurrerako guztia gutunaren ezker aldean idatzirik dago goitik behera.

[784] 14 de 1676] eguna eta urtea azpimarraturik.

[785] Iturria] errubrika darama ondoan.

[786] gaizquituz] irakurketa ez da ziurra, batez ere hasierako *-aiz-*i dagokionez; Urrizolak (2006: 265) *guirrquituz* irakurtzen du zalantzati.

[787] duben] esk. *dut* tatxaturik.

[788] 23 de 1676] eguna eta urtea azpimarraturik daude.

*2.3.4.2. Iruzkina*

Grafiaz den bezainbatez, txistukari afrikatuak markatzen dira: *bertzeac*, *gaitzean*, *pagatceco*, *ussatzen* (1), *baderitzazu* (3). Ez da, halere, sistematikoki egiten: *eztizaten*, *escriviceco* (1), *serbiçaria* (2). Ozen ondotik behin bakarrik markatzen du afrikatua: *bertzeac* (1); beste adibideetan ez da inoiz afrikatua markatzen. Azkenik, sarritan hitz amaierako <-q> eta behin <-ç> erabiltzen ditu: *ofreciturig*, *aussiriq*, *ceñeq*, *diruriq*, *cergatiq*, *gaizetariq* (2), *burdinariq* (3); *eç* (2).

Ezaugarri fonologikoei dagokienez, bokalei lotutako berrikuntza nabarmenetarik izan daiteke *-uB-* > *-ubB-* bilakabidea: *escussatuba* (1), *contuban* (3), *duben* (3). Behin bakarrik agertzen da *-oa-* > *-ua-* bilakabidea: *duaz* (1). Diptongoei dagokienez, *-ai-* > *-ei-* bilakatzen den adibide bat dugu: *Jeincoac* (1; 3), *Yeincoac* (2); gainerakoetan ez dago aldaketarik: *cembait* (1), *izaiten* (1), *naiz* (1). Era berean, *-eu-* > *-e-* bilakabidea gertatu da, *cere* (1) posesiboan ikus dezakegunez. Kontsonanteei dagokienez, ez dauka hasperenik: *biar* (2), *bear* (2), *amar* (2), *onetan* (2). Halaber, ez du bokal bikoitzik edo luzerik: *len* (3). Bestalde, badirudi orduko Berako hizkeran, egun bezala, **j-* ahoskera sabaikaria zela: *yauna* (2) eta *jauna* (1), *Yeinco* (2) eta *Jeinco* (1) agertzen baitira. Nafarroa gehientxoenean ohi denez, *-r(t)z-* multzoa mantendu du: *bertzeac* (1), *berze* (1, 3), *berce* (3), *borz* (1). Sinkoparen adibide pare bat ere badago: *boronte* 'borondate' (1) eta *drechoaren* (1); *OEH*ren arabera (s.v. *deretxo*), *dretxo* Iparraldeko forma da, baina goi-nafarreraz Beriainek eta Lizarraga Elkanokoak ere erabili dute. Aditzetan, *e-* arkaikoa mantendu da aditz batean: *egorceaz* (2). Bestalde, **-ani* zaharra *-ay* eta *-ain* egiten dela dirudi: *mandazay* (1) eta *mandazañaquin* (1) baititugu. Maileguetan, *-tione* > *-zione* egiten da: *dispossicionetan* (1) eta *obligacione* (2).

Izen morfologiari dagokionez, ez da goi-nafarreraren ezaugarri bereizgarritzat hartu ohi den instrumentaleko apikariaren aztarnarik gutun hauetan; aldiz, bizkarkaria behin baino gehiagotan agertzen da: *memoriaz* (1), *izanez* (2), *egorceaz* (2), *oguiaz* (3). Hirugarren graduko pluraleko erakuslea *ek* dela dirudi: *etaric* (1) 'haietarik'; gainera, genitibo pluralean *equin* (1) 'haien' forma analogikoa dugu, absolutibo pluraleko *(h)ec* oinarri; dena den, ik. beherago. Ablatibo plurala egiteko *-etarik* aldaera zaharra agertzen da: *etaric batequin* (1), *gaizetaric* (1). Adlatiboan *-rat* aldaera agertzen da: *alderat* (3). Helburua markatzeko, *-koz* ageri da: *olaracoz* (3). Berrogeita hamarretik gorako, zenbakiak egiteko, *lauetan oguey eta lau* (1) eta ehundik gorakoak egiteko *bi eun* (2) gisako egiturak erabiltzen dira.

Aditz morfologiaz den bezainbatean, *-ite-* erako aditz-izenak agertzen dira gutunetan: *izaiten* (1), *edireiten* (1), baita partizipio eta aditz-izen berriak ere: *bidaldu* (1), *cargatucera* (1).

Aditz jokatuak direla eta, trinkoen artean *baldin baderitzazu* 'baldin ondo baderitzazu' (3) agertzen da; cf. *OEH*, s.v. *iritzi*: «En ciertos contextos (v. ya los ejs. de Lazarraga y de O *Po* 57), si no se especifica otra cosa, es 'parecer bien'». Bestalde, aginteran *-i(n)-* erro zaharreko adizki trinkoa agertzen da, 'eman' esanahi arkaikoarekin: *Jeincoac dizula osasuna eta consueloa* (1); ohar bedi objektu pluralaren (*ossasuna eta consueloa*) komunztadura falta duela aditzak. Hirugarren gutunean agertzen den *eldu denari* (3) perifrasiak ez dirudi burutua islatzen duenik, «doanari» baizik. Perifrasiei dagokienez, aditzoina erabiltzen da, sistematikoki, indikatiboaz bestelako moduetan: *erabil eztitzaten* (1), *barca diazadazu* (1), *guarda çaizala* (1), *despacha detzatzun* (2),

*beguira çayzala* (2). Bestalde, geroaldia egiteko *-en* atzizkia dago: *emanen* (1), *izanen* (2). Aipagarri dateke **edun* saileko adizkietan *-e-* erroa agertzen dela: *badezu* (2), baina *-u-* erroa ere azaltzen da: *dut* (3). NORK-NOR sailean, *tuzu* 'dituzu' (1) gisako adizki aferesidunak agertzen dira. Objektu pluralaren komunztadura hasierako herskariaren bidez egiten du, goi-nafarreraz ohikoa denez; ik., halaber, *tidazu* (1). Alabaina ez da inola ere gutun hauetan orokorra: *ditut* (1, 2), *ditidazunac* (1), *dituzu* (3). Adizki horiek bi bilakabideren arteko kronologia erlatiboa egitea ahalbidetzen dute; bistan denez, *-zki-* pluralgilea *-it-*ez ordezkatzea aferesia baino lehenago gertatu da: 1. *dizkidazu* → *ditidazu*; 2. *ditidazu* > *tidazu*. NOR-NORI-NORK sailean **eradun* laguntzailea erabiltzen da indikatiborako: *otoy egiten derauçut* 'otoi egiten dizut' (2) eta *erran nerauzun* 'erran nizun' (3); hala ere, *-i(n)-* erroa ere agertzen da sail berean: *otoi eguiten dizut* (1). Bestalde, agidanez, datibo komunztaduraren *-o-* marka erroaren aurretik agertzen da: *deozaçun* 'diezaiozun' (3); aitzitik, beste adibide honek erro ondoren dauka datibo komunztadura: *egor diezadazun* (3). Aditz morfologiarekin amaitzeko, aipagarri da *barca diazadazu* (1) aginterazko perifrasiko laguntzailea, *d-* baitauka hasieran. Gisa horretako adizkiak ohikoak dira testu lapurtarretan; Materrarenak dira, esaterako ondokoak: *Declara diaçadaçu hobequiago* eta *Beha diaçoçu, aita cerucoa, pietatezco obra handi huni*.

Sintaxiaz aritzean aipatzea merezi luke TO-GEN deritzon egitura: *Urtubiaco drechoaren pagatceco* (1), *onen bidalçera* (2). Bestalde, ohikoagoa den *(-en) faltan* beharrean, *equin faltan* (1) dugu; itxuraz lehen osagaia soziatiboa izan badaiteke ere, aipagarria da *OEH*n FALTAN azpisarreran agertzen den lehenengo adibidea gutun honetakoa izatea. Hori dela eta, *equin* 'haieken, haien' genitiboko forma analogikoa izan daiteke (ik. § 3.2.1.3). Ekialdera baino gehiago erdialdera begira jartzen duen *zeren… bait-* egitura agertzen da gutunetan, ez *zeren/zergatic … -(e)n.* Erlatiboaren hurrenkera dela eta, erlatiboa izenaren ondoren duen adibiderik bada: *baba bidaldu ditidazunac* (1).

Esan ditzagun, orain, hiztegiaz bi hitz. Batetik, *zarrin* (3) agertzen da; *OEH*k hitz hori testu honetan bakarrik jasotzen du, eta 'zerrauts' esan nahi du (< gazt. *serrín*). Bestetik, *errugu* (1) & *errugo* (2) agertzen da 'arroa' bolumen unitatea adierazteko. Azkenik, testua nola edo hala ekialde zabaleko hizkeretan kokatzen laguntzen duten aldaera hauek ditugu gutunetan: *oray*, *ber(t)ze*, *ediren*, *otoi eguin*, *borz*, *sos*, *oren*, *erran*, *guibelatu*, *egorri*.[789]

Baztan-Bidasoako euskara aztertzen duelarik, Zelaietak (2008: 70-71) honako oharra egiten digu arestiko gutun hauek direla eta:

> Hiru gutunok balio berezia izan lezakete, XVII. mendean idatziak diren heinean; Euskal Filologian jakina denez, ez baitira anitz XVII. mendeko (eskualdeetako) langaiak. Haatik, gutunon argitaratzaile Ricardo Urrizola Hualdek «escritas en la variedad dialectal de la zona» erraten baldin badu ere (2006: 264), geolinguistikoki sobera koherenteak ematen ez duten hizkuntza ezaugarriak nahasian ageri zaizkigu hiru testu epistolarrotan: batetik, Berakotzat (eta Nafarroako Bidasoaldekotzat) jotzen ahal dugun «boronte» 'borondate' sinkopa dugu, baina bertzetik, Baztango eta Lapurdiko testuetan nola mintzoan ohi den «drecho» bezalako sinkopa dugu. Bertze

[789] Cf. *OEH*, s.v. *igorri*: «De uso general en la tradición septentrional; lo emplean tbn. autores altonavarros como Beriayn (*Trat* 20r) o Lizarraga (*Prog* 98); también Mendiburu (*IArg* I 131)».

> adibide batzuk eskaintzeagatik, baditugu arazo handirik gabe Berakotzat (eta berriz ere Nafarroako Bidasoalde osokotzat) jo genitzakeen ezaugarriak: «tidazu» 'dizkidazu' eta «tuzu» 'dituzu' erako aferesiak nahiz «uscaraz» monoptongazioa edota «contuban» 'kontuan' eta «duben» 'duen' bezalako fenomeno epentetikoak. Alabaina, ekialderagokotzat edo iparralderagokotzat hartuko genituzkeen formak ugariak dira hiru gutunetan: «etaric» 'haietarik', «gaitzetaric», «eguiten derauçut», «erran nerauzun», «edireiten», «oren»… Ondorioz, eta zorigaiztoz ere erran beharra dugu, XVII. mendeko euskarazko testigantza honek ez digu sobera balio gure eginbehar dialektologikoetarako.

Zelaietaren irizpide metodologikoak eta ondorioak zalantzan jartzeko inolako asmorik gabe, merezi luke oharño batzuk egitea, batez ere «ekialderagokotzat edo iparralderagokotzat hartuko genituzkeen formak» direla eta. Batetik, *-etarik* ablatiboaren aldaera inoiz orokorra izan zen eta goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean maiz lekukotzen da: besteak beste *baytaric* (ZalbGut), *gaiçetarica* (AresOtoi), *illetaric* (NafKat), *ebetaric* (El*Dot*). Are gehiago, Beraren herri mugakide den Etxalarko Sanzberroren 1749ko dotrinan ere zenbait aldiz agertzen da *-etarik* aldaera zaharra: *gastuetaric*, *hiletaric*. Beraz, testuotan agertzen dena ezaugarriaren adibide bat gehiago besterik ez litzateke, ez ekialderagoko eta iparraldeko hizkeren eragina edo horiengana hurbiltzearen isla.

**Eradun* dela eta, ohikoa da nafar testu zaharrean aditz laguntzaile hori aurkitzea. XVI eta XVII. mendeetako lekukotasunetan **eradun* Nafarroa osoan agertzen da: *drauzut*, *draue*, *draco*, *draugu* ditugu besteak beste; eta egun ere badago laginik iparraldeko goi-nafarrerazko hizkera batzuetan (cf. § 3.2.2.2.4).

Amaitzeko, hiztegi kontuak direla eta hara zer dioen *OEH*k *ediren* aditzaz:

> Las formas más usadas son *ediren* al Norte e *idoro* al Sur, aunque *ediren* se emplea mucho más. *Ediren* se halla en un principio con profusión en autores de todos los dialectos septentrionales y en algunos textos alto-navarros del s. XVII. Sin embargo, desde el s. XIX, parece que se encuentra únicamente en autores bajo-navarros, suletinos y labortanos de influencia bajo-navarra.

Besteak beste, 1693ko Elizalderen gutunetan *ediren* agertzen da*: Aseguiñ dut ediren zaitezen nere ama eta zu contentu*. Halaber, *oren* Iparraldeko zein Nafarroako hitza da, halere, goi-nafarreraren eremu gehienean *o-e* > *o-o* egin da, eta *oron* erabiltzen dute Beriainek edo Lizarraga Elkanokoak adibidez. Hortaz, Beran *oren* agertzeak Bortziriak bilakabidetik kanpo geratu direla isla lezake, ez besterik.

Ikuspuntu soziolinguistikotik aipatzekoa dirudi esaldi batean esaten dena; hain zuzen ere, gutunaren egileak berak aitortzen du ez duela ohitura handirik euskaraz idazteko, barkamena eskatzen baitio gutuna jasoko duenari: *Eta barca diazadazu escrivizeco modo gaizaz bañon escussatu banaiz ceren ezpaitugu guc escriuicen ussatzen uscaraz*.

### 2.3.5. Joseph Elizalderen gutunak

Bi gutun hauek 1693ko ekainean eta 1699ko uztailean idatzi zizkion Mexikotik Joseph Elizaldek bere arreba Maria Teresa Elizalderi. Gutunak Julio Urkixok zituen bere eskutan eta gaur egun eskuizkribuak Gipuzkoako Foru Aldundiaren Koldo Mitxelena Kulturunean daude, Julio Urkixo funtsean (katalogo zenbakia: J.U. 030109773). Katalogoaren arabera, gutunak holografo autografiatuak dira, hots, egileak berak idatzi eta sinatuak. Gipuzkoako Foru Aldundiko Repositorio Digita-

lean bi gutunen bertsio digitalizatuak daude: <http://hdl.handle.net/10690/3350>. Gure ediziorako bertsio digitalizatu horiek erabili ditugu.

Gutun bakoitza bi aldeetatik idatzitako orri batean dago. Bietan testua orrialdeen eskuinaldeetan dago, ezkerraldeetan ertz zabalak utziz. Salbuespen bat dugu 1693ko gutunean: bertan, Joseph Elizalderen agurraren eta sinaduraren ezkerrera, testu zati bat dago, ziurrenik gutunaren lehen idatzaldia amaitu ondoren erantsia; gure edizioan testu-zati hori sinaduraren ondoren kokatu dugu.

Dakigula, Mitxelenak (1964b) eman zituen argitara lehenik bi gutunak, eta ondoren Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.9), Mitxelenaren transkripzioa errepikatuaz. Edizio horietako aldaerak ohar paleografikoetan M eta S laburdurez azaldu ditugu. Dena dela, funtsean ez da aldaketa handirik bi edizio horien eta gurearen artean.

Mitxelenak dioskunez (1964b: 75), Urkixok eskuizkribuak gutun-azal batean gorde zituen, kanpoan hitz hauek idatziaz: «J. de U. 9.178, G-1, Carp. Ms. 1, Cartas antiguas en vascuence». Guztira hiru plegu ziren eta hirugarrenean Domingo Ruiz de Mazmelak Miguel Elizalde jesuitari 1677ko urtarrilaren 13an gaztelaniaz idatzitako gutun bat dago. Gutun honen plegu berean euskarazko bi gutunen kopiak daude, beste edizio batean aurkeztuko ditugunak (ik. § 2.3.6): bata Miguel Elizaldek bere izebari idatzia eta bestea izebaren erantzuna bide dira. Gipuzkoako Foru Aldundiaren Repositorio Digitalean bada hirugarren plegu horren argazkia ere. Azkenik, gutun-azalaren barruan, orri banatan, Urkixok idazmakinaz transkribatutako gutunetako bat eta eskuz idatzitako ohar batzuk ere sartuta zeuden. Koldo Mitxelena Kulturunearen katalogoan ez dugu aurkitu Urkixoren transkripzioaren eta oharren arrastorik.

Ez dakigu gauza handirik egileari buruz. Joseph Elizaldek Mexikotik idazten dio bere arrebari eta, gutunetan maiz erabiltzen duen tonuari erreparatzen badiogu, pentsa liteke aginduak emateko ohituta zegoen norbait zela (Mitxelena 1964b: 79). Hizkuntzagatik Nafarroaren iparraldekoa zela dirudi; Mitxelenak (1964b: 83) eta Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.9) Etxalarkoa zela iradokitzen dute. Hain zuzen ere, Zulaikak (2017) erakutsi du Joseph Elizalde Etxalarren jaio zela eta bertan bataiatu 1664ko apirilaren 29an. Bere nobleza eta merituak kontuan hartuta, herriko alkate eta gerra kapitain izendatu zuten. Halere, 1680 inguruan Mexikora joan zen. Dirudienez, posizio handiko gizona izan zen: bere semea, bera ere Joseph Elizalde, bertako Kontsulatuko Errege Auzitegiko diputatu eta hautesle izendatu zuten.

### *2.3.5.1. Testuak*

1. 1693-06-14

<1r> [*gurutzea*]

Nere arreva bioçecoa: Orai urte bete errezevitu nituen bi paper zureac aseguin ascorequin zure osasunaren berri onac izaiteaz. Zere senarraren compañian Jaungoicoac urte ascoz dizuela aseguin ascorequin bere servicean eta nere amaren onrrazean.

Zuc gaztigatu zenidan espantazen ziñela nola zure borondatea[790] sujetatu nai nuen berzeren gustura, Jaungoicoac eguiten eztuena bere aurrequin. Nic ez-

[790] borondatea] *-da-* lerro artean gehitua.

tut sujetazen niori borondatea, baño nic bialzen nuena esan dezaquet eztaquiola eman nic esaiten dudana eguin nai eztuenari; eta nic nere nagusiari gaztigacea mira zezala zugatic,[791] agradecitu bear zenidan gañeracoa bezala. Eta aren merchedearen iz batec aniz eguiten du[792] edoziñ ere gauzetan. <1v> Eztaquizula iduri aniz daquizula, zergatic gueiago us eguiñen duzu azertatu baño.

Aseguiñ dut ediren zaitezen nere ama eta zu contentu, zu senarrarequin Jaungoicoac urte ascoz conserba zaitzatela.[793] Mexico[794] y junio de 14 de 1693.[795]

Gure lengusua jaunac[796] esango dizu jaquin nai duzuna, zergatic ezin uscaraz esan dezaquet nai dudana.

Zure anaia maite nai zaituena
Joseph de Elizalde[797]

Nere amari bialzen diot orai nere lengusuarequin virreun zorzi errealaco zuen compañian erregala dadien. Eman ezayozue gustu asco bizi den artean, zergatic aren merchedeac duenean ezaizue faltaco zuey. A Dios.[798]

Nere arreba Maria Theresa de Elizalde[799]

2. 1699-7-9

<2r> [*gurutzea*]

Nere arreva biozecoa: Zure escuco letrac ecusi ditut aseguin anizequin, zerengatic badacatzen zure osasunaren berri onac senarrarequin, eta semeac deseo aniz dut Jaungoicoac eman diezazuela urte anizetan. Ni nago zure serviceco.

Atseguin asco dut zubec nere ama andre biozecoaren[800] compañian igarozen duzuela, bai eta jaquiteaz[801] zu edirazen zarela[802] iru semerequin. Jaungoicoac nai badu, bere serviceco yiuz diezazula urte anizetaco, baño gaiztoac izan bear badira, berezat eramen dezala chiquidanic. Oroizen naiz zein ongui azi gueninduen gure amac,[803] eta horrela gu ez onac izaiteaz gurea da culpa. Zuc ere azizazu zere semeac ongui, zergatic aniz edo gueiena

---

791 zugatic] esk. *zugatic* : M S *zergatic*

792 du] geroago tartekatua dirudi.

793 zaitzatela] esk. *zaitezatela*.

794 Mexico] esk. *Mex$^{co}$*.

795 14 de 1693] azpimarraturik.

796 lengusua jaunac] esk. *lengusua jaunac* dator eta, hutsa izan badaiteke ere, hala utzi dugu hizkeran egindako hiperzuzenketa ere izan baitaiteke; Zelaietak (2008: 162) Baztan-Bidaso aldeko egungo mintzoetan halakoak egiteko joera dagoela erakusten du.

797 Joseph de Elizalde] izenaren ondoan errubrika dator.

798 Pasarte hau orrialdearen eskuinaldean idatzita dago, gutunaren agurraren eta sinaduraren parean.

799 Lerro hau orrialdearen beheko aldean dago.

800 biozecoaren] ondoren bi letra tatxaturik.

801 jaquiteaz] esk. *jaciteaz*; <c> ez da ondo ikusten; Mitxelenak eta Sarasolak <k> transkribatu zuten, baina gure ustez <c> irakurketa hobea izan liteke; hala ere, <r> ere irakur liteke. Azken hots horrekin, ordea, *jariteaz* genuke eta ezin genezake interpreta; <c> *jaciteaz* agertzen bada ere, herskari ahoskabe bezala irakurri behar litzateke.

802 zarela] esk. *zela*.

803 gure amac] lerro artean.

da guero ona edo gaistoac diraden. Icasi dezatela chiquidanic oracioac, leizen eta escrivicen. Eta eracusi comfesazera eta Jaungoicoa comunioan arzera maiz. Eta dabilzela inclinacio ona daducatenaquin.[804] Eta guero estudioa aguiz ona izanen da, baldin apez edo fraile izan nai badute, zergatic horrela errazago izanen[805] zayo[806] irabaztea zerua, zertacoz Jaungoycoac atzi gueninduen eta berze gauza gucietaco, ezperen layan <2v> ifeni aguiz anditu gave, zergati berzela iduri zait etzin or niorc jan dezaque.

Esquerric asco emaiten dizut zere cuidadoagatic. Jaungoicoari otoiz eguin enegatic, eta beti uste dut eguiñen duzula, bai eta nere osaba ere. Bere alarguna eta gure izebari eman diot gure amaren eta zureganic adizera pena ascorequin lagun eguiten diozuela berac daducanean senarraren faltaz, eta agradecitu du asco eta bialzen dizue aniz gorainzi. Nere lengusu guziey eta izeba eta berze aide eta adisquideey nere gorainziac.[807]

Ni errazago lizateque[808] escrivicea erdaraz, baño zuc eta nere amac eztaquizue eta orrengatic eguiten dut au horrela. Badaquit anzi zaidala aniz gauza nola baita oguei urte ortic atere[809] ninzela, bañon adizen dut guzia. Berriz escrivicen duzunean eguiñ ezazu unela eta icasico duzu guchi bana. A Dios, nere arreva laztana, zeñec iduqui zaizala bere escutic aniz urtez. Mexico, uztallaren bederazigarren egunean, milla eta seietan eun eta lauretan oguei eta emerezi urtetan.

Zure anaia aniz nai zaituena,
Joseph de Elizalde[810]

Nere arreva biozecoa Maria Theresa de Elizalde

### *2.3.5.2. Iruzkina*

Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.9) azpimarratzen duenez, testuak ez du bestelako zailtasunik interpretatzeko orduan, baina badira Sarasolak berak «harrigarritzat», baina «lapsus» eta «deslices de pluma» bezala hartutako hutsak: *zaitezatela*, *lengusua* (1v), *zela*, *izanan*, *dadutenaquin* (2r), *goinziac*, *lizatec*, *atere* (2v). Horiek guztiak —salbu eta *lengusua* eta *atere* baina ik. dagokien oharra— gure edizioan zuzendurik agertzen dira eta aparatu kritikoan azaldurik.

Oro har, bi gutunen hizkuntza-ezaugarriak berdinak dira. Grafiari dagokionez, aipagarria dateke <ç> grafema behin bakarrik agertzea: *bioçecoa* (1r). Hitz hasierako /u/ guztiak <V> idazten ditu, letra larriz beti: *vrte-* (*passim*), *vs*, *vscaraz* (1v), *vste*, *vnela*, *vztallaren* (2v). Behin baino ez du erabiltzen <V> kontsonantikoa: *virreun* (1v). Hitz barnean, aldiz, ohikoa da <u> kontsonantikoa: *arreua* (*passim*), *errezeuitu*, *se-*

[804] daducatenaquin] esk. *dadutenaquin*.
[805] izanen] esk. *yzanan*.
[806] zayo] irakurketa garbia da, baina *zaye*-edo espero genuke, aurreko aditzen erregimenak ikusita 'haiei' behar bailuke.
[807] gorainziac] esk. *goinziac*. *OEH*k *gointzi* aldaera jasotzen du, testu hau lekukotasun bakarra izanik; baina cf. goraxeago *gorainzi* (2v).
[808] lizateque] esk. *lizatec*.
[809] atere] Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.9) hutsa dela iradoki arren, egun forma hori erabiltzen da eskualde horretan. Cf. *ateri ala* 'atera ahala' Miguel Elizalde eta izebaren arteko gutuetan (§ 2.3.6).
[810] Joseph de Elizalde] ondoan errubrika dator.

*ruicean* (1r), *seruiceco* (2r), *escriuicen*, *gaue*, *escriuicea* (2v). Orobat, hitz hasierako /i/ guztiak <Y> idazten ditu: *yzaiteaz* (1r, 2r), *yz* (1r), *yduri* (1v, 2v), *ygarozen*, *yru*, *yzan*, *ycasi*, *yzanen*, *yrabaztea* (2r), *yfeni*, *yzebari*, *yzeba*, *ycasico*, *yduqui* (2v). Aldiz, <y> kontsonantikoa behin agertzen da: *yiuz* (2r); gainerakoetan <j> dugu: *Jaungoico-* (*passim*), *junio*, *jaunac*, *jaquin* (1v), *jaquiteaz* (2r), *jan* (2v).

Eskuarki egileak ez ditu txistukari igurzkari eta afrikatuen grafiak bereizten; bokal artean: *aseguin* (*passim*), *bioçecoa*, *seruicean*, *onrrazean* (1r) (eta *-tze* atzizkiaren gainerako agerraldiak), *ezaizue* (1v), *biozecoa* (2r, 2v), *anizequin*, *anizetan*, *biozecoaren*, *anizetaco*, *berezat*, *eracusi* (2r), *zaizala*, *bederazigarren*, *emerezi* (2v) eta, ziurrenik, *diezazuela*, *dezala*, *azizazu* eta *dezatela* (2r) (Mitxelena 1964: 78-79); hitz amaieran: *aniz* (*passim*), *iz* (1r), *vs* (1v), *yiuz* (2r), *aguiz* (2r, 2v), *otoiz* (2v). Hala ere, bigarren gutunean badago igurzkari eta afrikatuak bereizteko ahaleginen bat: *badacatzen*, *Atseguin* (2r), eta baita hiperzuzenketa batzuk ere: *atzi* (2r) 'hazi', *etzin* (2v) 'ezin'.

Fonologiaren arloan nabarmenena hasperenik eza da: *nai* (1r), *vs* (1v). Halaber, *u+B > ubB* aski berria dirudien bilakabidearen adibide bat dugu: *zubec* (2r). Beste adibide batek *o > u / _n* bilakabidea erakusten digu: *unela* (2v). Arkaismoen artean, *-r(t)z-* kontsonante multzoa mantentzea izan daiteke aipagarri: *berzeren* (1r), *berzela* (2v). Halaber, *eduki* aditzaren jokatuetan bokal arteko *-d-* mantentzen da: *daducatenaquin* (2r), *daducanean* (2v).

Izen morfologiari dagokionez, *eu > e* bilakabidearen ondorioz, *nere* (*passim*) eta *zere* (2r, 2v) gisako posesibo indartuak ditugu. Soilen artean, lehen pertsonan *ene* arkaikoaren aztarna dugu *enegatic* (2v) adibidean; hala ere, *nere* soiletara ere hedatu da. Aldiz, bigarren eta hirugarren pertsonan Linschmann-Aresti legea betetzen du, eta *zure / zere* eta *aren / bere* bereizten ditu: *zerengatic badacatzen zure osasunaren berri*, *Zuc ere azizazu zere semeac ongui* (2r), *zergatic aren merchedeac duenean ezaizue faltaco zuey* (1v), *zeñec iduqui zaizala bere escutic* (2v). Izenordainekin amaitzeko, *niori* (1r) eta *niorc* (2v) izenordainak ere ageri dira gutunetan, goi-nafarreran aise dokumentatzen direnak (Amendux, Mendiburu, Lizarraga, besteak beste). Goi-nafarrerazkoak izanagatik ere, instrumentalean *-z* aldaera bizkarkaria agertzen da sistematikoki: *izaiteaz* (1r, 2r), *ascoz* (1r), *jaciteaz* (2r), *faltaz* (2v). Bestalde, bizidunen ablatiboan *-ganic* aldaera agertzen da, behin bada ere: *zureganic* (2v). Destinatiboan *-zat* ageri da: *berezat* (2r). Horrekin batera, *-ko* ere badago: *eta berze gauza gucietaco* (2r). Moduzko adberbioak sortzeko *-gi*: *ongui* (*passim*).

Aditz morfologiari begiraturik, aditz-izena osatzeko *-n*-z amaitutako aditzekin *-iten* atzizkia erabiltzen da: *esaiten* (1r), *izaiteaz* (2r), *emaiten* (2v). Eta geroaldian *-en*: *eguiñen* (1v), *izanen* (2r). Horrezaz gain, *-i(n)-* erroaren jusibo trinkoa agertzen da: *dizuela* (1r). Jusibo trinkoaren lekuko da *dabilzela* (2r) ere. Halaber, ezin aipatu gabe utzi testuan behin behintzat lekukotzen den subjuntibo trinkoa: *gaistoac diraden* (2r). Perifrasiei dagokienez, **edun* laguntzailearen adizkien erroa *-u-* da beti: *eztut* (1r), *duzu* (1v, 2r), *dut* (*passim*). NOR-NORK saileko adizkien artean, iraganean *guenindUen* (2r) gisako aldaera analogikoak ditugu. Indikatibotik landako perifrasietan bi joerak ditugu *-i*-z bukatutako aditzekin: *yiuz diezazula*, *icasi dezatela* (2r); zalantza egon liteke *azizazu* (2r) adibidearekin, *-i-* hori partizipioarena zein aditz laguntzailearena izan baitaiteke. Indikatibotik landako NOR-NORI-NORK sailean, *-i-* datiboaurrekoa dugu *eman diezazuela*, *yiuz diezazula* (2r) subjuntiboko adibideetan; ez, aldiz, aginteran: *eman ezayozue* (1v).

Sintaxiarekin jarraitzeko, *bi paper zureac* (1r) adibidean ikus dezakegunez, posesiboa izen sintagmaren eskuinean dago. Ondoko adibideak erakusten duenez, datibo komunztadura ez da nahitaezkoa: *Nic eztut sujetazen niori borondatea* (1r). Bestalde, TO-GEN deitzen zaion ezaugarria agertzen da: *bere servicean eta nere amaren onrrazean* (1r), *zure serviceco*, *bere serviceco* (2r); alabaina ez da salbuespenik falta: *Jaungoicoa comunioan arzera*, *irabaztea zerua* (2r). *Erakutsi* gisako aditzen objektu zuzena den aditz-izenak *-tera* atzizkia darama: *eracusi comfesazera eta Jaungoicoa comunioan arzera maiz* (2r). Helburuzko perpausetan *-koz* aldaera ageri da: *zertacoz* (2r). Amaitzeko, 'Xrekin Y' egitura kopulatibo zaharra agertzen da: *zu senarrarequin Jaungoicoac urte ascoz conserba zaitezatela* (1r). Euskara arkaiko eta zaharrean maiz lekukotzen den egitura bada ere, goi-nafarreraz ezagutzen dugun adibide bakanetakoa da; hain zuzen ere, egituraren beste adibidea Goizuetako 1753ko sermoian agertzen da (Reguero 2015b).

Lexikoari dagokionez, *gaztigatu* (1r) agertzen da 'jakinarazi' esanahiarekin; cf. *OEH*, s.v. *gaztigatu*:

> ***1.*** Avisar, notificar; hacer saber. «Mander» Ht *VocGr* y Dv. «Avisar», «amonestar», «apercibir» Lar y Añ. «Mander, envoyer une commission (dialecte labourdin)» *VocBN*. «Notificar de lejos» *VocB*. *Tr*. Documentado desde Dechepare en textos septentrionales (no suletinos), alto-navarros y guipuzcoanos.

Halaber, testuan agertzen diren hainbat hitz eta aldaera Nafarroan eta Ipar Euskal Herrian bakarrik erabiltzen dira: *ediren* (1v), *OEH*ren arabera goi-nafarreraz XVII. mendean bakarrik lekukotua; *uscaraz* (1v), *OEH*ren arabera (s.v. *euskara*), Nafarroako iparraldeko hizkeretan agertzen den aldaera da; *aniz* (*passim*), nagusiki ekialde osoan erabilia; *aguiz*, Lapurdin, Nafarroan eta Gipuzkoako zenbait testutan lekukotua; *eramen* (2r) aldaera Lesakako 1857ko testu batean ere lekukotzen da, *OEH*ren arabera (s.v. *eraman*). Halaber, *ifeni* (1v) aldaera ez bide da Nafarroan ohikoena. Bestalde, ekialdeko *orai* (1r) aldaera ere badugu, baina *esan* (1v) mendebaldeko aldaera agertzen da. Azkenik, *atere* (2v) 'atera' aldaera dago.

Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.9) adierazi bezala, testua goi-nafarreraz idatzita dago zalantzarik gabe; hori erakusten dute, esaterako, erdialde-ekialdekoa den geroaldiko *-(e)n* erabiltzeak, *berze* izateak, baina hasperena ez izateak. Alabaina, zuzenean goi-nafarreraren berezko ezaugarri nabarmenik ez dute gutunok; esaterako, instrumentalean aldera, bizkarkaria erabiltzen du: *ascoz*, *faltaz*, *aniz*.

Egilearen jatorriak eta hizkuntza-ezaugarriek Nafarroako iparraldera begira jartzen gaituzte. Hegoaldeko goi-nafarrerazkotzat ez hartzeko arrazoi pisuzkoa dira soziatiboko *-rekin* eta iraganeko *-n* marka sistematikoak izatea. Bestalde, instrumentaleko morfemaren aldaera bizkarkariak ere Nafarroaren iparraldera begira jartzen gaitu: testu zaharretan Nafarroako iparraldean eta ipar-mendebaldean ez da aldaera apikaria erabiltzen. Gainera, *zubec* (1r) hitzean dagoen *u+B* > *ubB* bilakabidea Bortzirietan ohikoa da garai hartan, baina handik kanpo testu zaharretan ez dugu lekukoturik aurkitu.

Kulturalki begiratzean biziki gogorra egiten da ondoko pasartea, arrebaren semeez ari dela: *Jaungoicoac nai badu, bere serviceco yiuz diezazula urte anizetaco, baño gaiztoac izan bear badira, berezat eramen dezala chiquidanic* (2r). Alegia, haurrak ez badira zintzoak eta esanekoak, hilda hobeto daudela dio Elizaldek. Ez dakigu iritzi hori

ohikoa zen ala ez garaiko gizartean, baina ez da zaila erlijio kristauaren eta, batez ere, Itun Zaharraren pisua ikustea:

> Eman dezagun guraso batzuek seme zentzakaitza eta bihurria dutela, aitamen esana egiten ez duena eta, zentzarazten saiatu arren, kasurik egiten ez diena; gurasoek semea hartu eta herri-arduradunengana eramango dute auzitegira, eta esango diete: «Gure seme hau zentzakaitza eta bihurria da, ez digu esana egiten; tripontzia eta mozkorra da!» Orduan, hiritarrek harrika emango diote hil arte. Horrela ezabatuko duzue gaiztakeria zeuen artetik; horren berri jakitean, beldur izango dira israeldar guztiak (*Deuteronomioa* 21).

### 2.3.6. Miguel Elizalde eta honen izebaren arteko gutunak

Gaztelaniaz idatzitako gutun baten zuriuneetan euskarazko bi gutunen kopiak agertzen zaizkigu. Horietako bat Miguel Elizaldek bere izebari idatzi zion eta bestea izebaren erantzuna da (Mitxelena 1964b). Gutunen gai nagusia asto baten salerosketa da.

Eskuizkribua paper tolestu batean idatzita dago. Lehen orriari zati bat falta zaio, kanpoaldean goitik behera urratuta baitago. Euskarazko gutunak bigarren orrian daude: aurkian, gaztelaniazkoaren sinaduraren azpian, izebarena eta ifrentzuan, orriaren erditik behera, Elizalderena. Biak daude orrian goitik behera idatzita eta Elizalderen gutunaren kokapenak iradokitzen du garai batean papera bi plegutan tolestu zela (bigarren tolesaren marka ere ikus daiteke). Gutun bakoitza esku desberdin batek kopiatu du eta tinta ere desberdina bide da: izebarena beltzagoa eta Elizalderena argiagoa.

Gaztelaniazko gutuna Domingo Ruiz de Mazmelak Miguel Elizalderi 1677ko urtarrilaren 13an idatzitakoa da. Horren arabera, Elizalderen eta haren izebaren gutunak noizkoak diren ez badakigu ere, ziur esan dezakegu plegu horretan egindako kopiak 1677 ondokoak direla.[811]

Mitxelenak dioskunez (1964b: 75), plegu hori, Joseph Elizalderen bi eskutitzekin batera, Urkixok gutun-azal batean gorde zituen, kanpoan hitz hauek idatzita zituena: «J. de U. 9.178, G-1, Carp. Ms. 1, Cartas antiguas en vascuence». Gutun-azalaren barruan, orri banatan, Urkixok idazmakinaz transkribatutako gutunetako bat eta eskuz idatzitako ohar batzuk ere sartuta zeuden. Koldo Mitxelena Kulturunearen katalogoan ez dugu aurkitu Urkixoren transkripzioaren eta oharren arrastorik.

Nolanahi ere den, Mitxelenak (1964b: 81) Urkixoren oharren testua dakar: «La casa Elizaldea. Don Manuel Zubigaray, cura párroco de Echalar. Citado por Joannes d'Etcheberri, 37, catedrático del Colegio... de Roma. Aguirre, hijo de Echalar». Horretan oinarriturik, Mitxelenak iradokitzen du Miguel Elizalde Etxalarkoa zela, eta bera dela, hain zuzen, Joanes Etxeberri Sarakoak pasarte honetan aipatzen duen Aita Elizalde jesuita (*apud* Bilbao 2006):

> Arroçoinamendu hunen eredura, ecin erran diteque, beraz, escualduna burugogor eta har-aira gaitcetacoa dela, baina bai gai ona eta escoletacotçat behar beçalacoa.

[811] *OEHn*, s.v. *gasna*, testu hau aipatzen da eta *c.* 1693 urtea dakarte, ziurrenik Joseph Elizalderen lehen gutunaren datarekin nahastuta.

Eguia hau exempluz hala eracutsi içatu dute Escual Herritic **<104>** herri arrotcetarat ilkhi diren bakhotchetaric hainitcec, hala nola:

D. Navarro Baztan Aspilcoeta semeac,
Aita Eliçalde, Jesusen Compainiaco Jesuistac, eta halaber Etchelarco semeac,
Aita Geronimo Echenique, Urdaçubico conventucoac, eta Erratçuco semea.
...

Halaber, Palau y Dulcet-en (1948-1987: xi, 402b) informazio bat baliatuz, Mitxelenak diosku Miguel Elizalde bi biografia-libururen ustezko egilea izan zela: batetik, *El héroe cántabro. Vida del señor don Antonio de Oquendo* (Toledo 1666) eta, bestetik, *Vida de Santa Brígida, Princesa de Nericia* (Donostia, 1676), nahiz eta bi liburuetan egile bezala Miguel Okendo jenerala agertzen den. [812]

Miguel Okendo ez da ezezaguna Espainiako itsas armadaren historian (ik., adibidez, Gracia Rivas 2009) eta Palau y Dulcetek Elizalderen egiletza iradoki besterik ez zuen egin («Parece ser que escribió la obra el P. Miguel de Elizalde», «También se supone escrito por el mismo P. Elizalde la obra siguiente»), inolako datu edo argudiorik eman gabe.

Bi gutun hauek Mitxelenak (1964b) argitaratu zituen lehen aldiz (M) eta, ondoren, Sarasolak (*ConTAV* § 5.2.9), Mitxelenaren transkripzioa errepikatuz. Funtsean, ez dago aldaketarik bi edizio horietako transkripzioen eta gurearen artean. Eskuizkribuaren argazkiak Gipuzkoako Foru Aldundiko Repositorio Digitalean daude: <http://hdl.handle.net/10690/3351>. Horiexek erabili ditugu gure edizioa egiteko.

### *2.3.6.1. Testuak*

[*ikurra*]

<2r> Izeba andrea:[813] Or bidalzen dut astuaren esque eta diyo ola lanetan[814] dubela arzequa eta emanen dubela cobratu ta beriala, illabete bat gora edo bera. Eta Arrosaq erran dit zorzico baten gasna nola nai duzuben, eta

---

[812] Eusko Legebiltzarraren liburutegian lehenengo liburuaren kopia digitalizatu bat dago: <http://www.liburuklik.euskadi.net/handle/10771/8395>. Atarian hauxe irakurtzen da, egileari dagokionez: «Por el General Don Miguel de Oquendo, Caballero del Habito de Santiago, y Señor de las Casas de Oquendo, y San Millan»; Antonio Okendoren sasiko semea bide zen. Orobat, bigarren liburua GoogleBooks-en aurki daiteke: <https://books.google.es/books?id=ywsOR0LqDj8C>. Haren atarian hauxe dator: «El General Miguel de Oquendo. Caualllero del Abito de Santiago, Señor de las Casas de Oquendo, y S. Millan, y Torre de Lassarte». Bigarren liburu honetan, baina, Miguel Elizaldek sinatutako hiru orrialdeko gutun bat dator, pribilegioaren eta lizentzien artean kokatua, non liburuari buruzko iritzi ona eta argitaratzea merezi duela agerrarazten duen.

[813] Izeba andrea] Ezkerretara *NeYzeba* jartzen du.

[814] ola lanetan] esk. *olaianetan*. Modu batean baino gehiagotan interpreta daiteke, baina bat ere ez zaigu sendo eta sinesgarria iruditu. Alde batetik, *Olaianeta* edo antzeko toponimo bat izan liteke, baina *Nafarroako Toponimia Ofiziala* datu-basean ez dugu halakorik aurkitu. Bigarrenik, olagintzako termino zahar bat zela pentsa liteke, eta horretan ere gure bilaketak huts egin du. Hirugarrenik, 'olo-janetan' elkartuarekin pareka liteke, *-o* > *-a* aldaketa eginik; izan ere, badirudi oloa ordaintzeko ere erabil zitekeela (cf. *OEH*, s.v. *olo*: ««*Jondone Martiari oloak pagatzea,* c'est d'autant qu'en Navarre et en Castille la Vieille le terme pour payer les rentes d'avoine était à la Saint Martin» O-SP 231»); haatik, gutunetan behin eta berriz dirutan pagatzeaz ari dira. Dena den, ez dago lekuz kanpo Isastiren errefraua gogora ekartzea: *Pagatzalle gaiztoagandic olo* (77). Beraz, eskuizkribuko irakurketak izan litzakeen interpretazioak aztertu

erran dit beraq guti eguiten dubela, baño bayez eraguiñen dubela gasna ona. Eta astoaren prezioa errayozu nerequiñ ajusta dadiyela[815] emen. Eta erran dit Arrossaq borz zorzico baliyo dubela eta bastaq amalau erriel. Eta erran diot ala niq ez astuaren preziyua biño bai bastarena.[816] Eta, ala, ez erran[817] nesca orri[818] deus preziyuan; niri escribi zadazu eta, ajustazen ezpagara, bidalduco dut guibilat. Eta amaq ezaguzen tu yendioq nor diren, niq gizonarenquin dut tratuba, eta ala guizon zuzena da eta ez sobra preziyua esca. Niq[819] arengatic ateri ala ateraco dut eta, conten ezpazara, izulico dut. Eta amari eta Josseperi eta guziyei gorainzi. Ossasuna dugu guztiyeq. Eta zenbit sagardo zorta bidal[820] ezaguzu astuan eta emayozube basta ere. Artuaq aguiz ona tugula amari[821] eta goroza franco[822] badugula.

<2v> Miguel: Erranion Arrosari, eta ala diot orañ ere, astua len salduba da Madalenacho Martiñeneco dichosari. Eta eztut nic precioric mudatuco; nai badu artu eta nai badu uci; borz zorcico basta gabe, eta amalau erriel basta. Bi[823] erriel galduco ditut bastan amabi errieletan nai badu, eta nai ezpadu izuli ezazu bereala. Nic salceco cargua dut eta erdiac bederen escuan gabe ez traturic eguiñ. Eta burdia izateco[824] olachocoa eta dirutaco precioan. Eta gasna, berac eguiten ezpadu, eztadiela billa. Gorainci guciai.

Sagarrac anditu dire, sagardoac eguiñen ditugu bereala.

### *2.3.6.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, <i> erabiltzen da, oro har, baina kasuren batean <y> dugu balio bokalikoarekin: *dyot* (2r), *yzuli*, *yzateco* (2v). Behin bada ere, <v> bokalikoa dago hitz hasieran: *vci* (1v). Txistukariei dagokienez, *e* eta *i* bokalen aurrean bizkarkari igurzkari eta afrikatuetarako Elizaldek <z> eta haren izebak <c> erabiltzen dute: *izeba*, *prezioa*, *preziyua*, *zuzena*, *guziyei*, *gorainzi* (2r) etab., baina *precioric*, *vci*, *zorcico*, *salceco*, *precioan*, *gorainci*, *guciai* (2v). Aldiz, hots hau islatzeko ez dute inoiz <ç>-rik erabiltzen. Bestalde, afrikatu eta frikarien arteko bereizketarik ez da egiten: *bidalzen*, *arzequa*, *zorcico*, *bayez*, *ajustazen*, *ezaguzen*, *izulico*, *aguiz*, *goroza* (2r), *uci*, *borz*, *izuli* (2v).

---

ondoren, egokiena iruditu zaigu hutsa dela pentsatzea; oroit bedi eskuizkribuan kopiak ditugula, ez jatorrizko gutunak eta, beraz, *-l-* → *-i-* ordezkatzea aski erraza da.

[815] dadiyela] lerro artean *di* edo antzerako zerbait idatzita; Mk ere *di* irakurtzen du eta iradokitzen du forma osoa *dadiyela* dela.

[816] bai bastarena] *bai*-k eta ondoko hitzeko <b>-k beltzune bat dute gainean.

[817] erran] <n> lerro artean.

[818] orri] Ez da hitz hau nahi bezain ongi irakurtzen, baino <i>-z bukatzen dela dirudi. Mk ere *orri* irakurtzen du.

[819] Niq] Hemendik aurrerako guztia, orain artekoaren eta orriaren ezkerreko ertzaren artean idatzita dago orria bertikalki jarrita (orain artekoa horizontalean).

[820] bidal] esk. *bida.*

[821] amari] *esan* edo antzeko aditz bat isildu da.

[822] franco] Hitzaren amaiera ia ezabaturik dago.

[823] bi] Ondoren zerbait idazten hasi zen, baina tatxaturik dago

[824] izateco] Irakurketa garbia bada ere, ez da horren garbi interpretatzioa. 'Izan ditezela' dela dirudi, baina garai hartan egitura hori ez bide da ohikoa; gainera, *yzaiteco* litzateke esperotako forma. *Yzateco* toponimoa izan liteke, nongo kasuan.

Ez dago apikari afrikatuen adibiderik. Grafiarekin amaitzeko, aipagarri dira hitz amaierako herskaria islatzen duten <q>-ak; besteak beste, *Arrossaq*, *beraq*, *bastaq* (2r) ditugu. Gisa horretako adibide guztiak Miguel Elizalderen gutunekoak dira; izebak beti <c> erabiltzen du bukaeran. Elizalderen gutunekoa da, halaber, *arzequa* (2r).

Bi gutunek berrikuntza fonologiko ugari erakusten dituzte. Hasteko, *oa* > *ua* bilakabidea gertatu da: *preziyua*, *astuaren* (*passim*), *arzequa*, *preziyuan*, *astuan*, *artuaq* (2r), *astua* (2v), baina *astoaren* (2r) ere bada. Horrezaz gain, *ea* > *ia* ere gertatu da *beriala* (2r) adibidean, baina *bereala* (*passim*) ere badago. Halaber, *ia* > *ie* gertatu da *erriel* (*passim*) adibidean, baina hori da kasu bakarra. Bestalde, hiatoetan kontsonante bat tartekatzeko joera oso indartsua da: *diyo*, *baliyo*, *preziyuan* (2r), *preziyua* (*passim*), *guziyei*, *guztiyeq*, *duzuben*, *emayezube* (2r), *salduba* (2v), *dubela* (*passim*); salbuespen gutxi batzuk badira: *cargua*, *escuan* (2v). Diptongoei dagokienez, *ai* > *i* bilakatu da bi adibidetan: *biño*, *zenbit* (2r); dena dela, ez da sistematikoa, *baño* (2r) ere agertzen baita. Badirudi sinkoparen adibide izan daitekeela *sobra* (2r), nahiz eta jatorrizkoa ere izan daitekeen. Kontsonanteei dagokienez, sudurkaria sabaikaritzen da *i* bokalaren eta bokalerdiaren ondoren; azkenetan bokala sudurkariarekin asimilatzen da: *illabete*, *baño*, *eraguiñen*, *nerequiñ*, *biño* (2r), *orañ*, *Martiñeneco*, *eguiñ*, *eguiñen*, *billa* (2v). Bestalde, *borz* (*passim*) adibideak erakusten duenez, *-rz-* multzoa mantentzen da. Amaierako herskariak galtzeko joera bide dago ondokoarekin bat egitean: *ona tugula*, *conten ezpazara* (2r). Azkenik, **j-* zaharraren ahoskera sabaikaria da, ez belarra: *yendioq* (2r).

Izen morfologiaz den bezainbatean, iparraldeko goi-nafarreraz esperotako *-rekin* dugu soziatiboan: *nerequiñ* (2r); *nere* posesiboarekin. Hurbiltze adlatiboa dugu kasu batean: *guibilat* (2r). Azkenik, datibo pluralean *-ei* (*guziyei* 2r) eta *-ai* (*guciai* 2v) agertzen dira.

Aditz morfologiari dagokionez, geroaldia egiteko *-n*-z bukatutako aditzetan *-en* erabiltzen da: *emanen*, *eraguiñen* (2r). Partizipioen artean, *bidalduco* (2r) aldaera berria agertzen da. *Izan* aditzaren orainaldiko lehen pertsona pluraleko eta bigarren pertsona singularreko erroa *-a-* da: *ajustazen ezpagara*, *conten ezpazara* (2r). Bestalde, nafarrerazko testuetan maiz aurki daitekeen *dire* (2v) analogikoa dugu hirugarren pertsona pluralean. Halaber, **edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da: *dut*, *duzuben*, *dugu* (2r). NOR-NORI-NORK sailean *-i(n)-* erroa agertzen da: *erran dit* (*passim*), *erranion* (2v). Aferesidun adizkien adibide batzuk ere baditugu: *ezaguzen tu*, *ona tugula* (2r); hala ere, *galduco ditut*, *eguiñen ditugu* (2v). Indikatibotik kanpoko perifrasietan aditzoina da nagusi: *ajusta dadiyela*, *escribi zadazu*, *ez sobra preziyua esca* (2r), *eztadiela billa* (2v). Aitzitik, *-i*-z bukatzen direnekin partizipioa erabiltzen da: *izuli ezazu* (2v). Bestalde, **edin*-eko adizkietan *dadiyela* (2r) eta *eztadiela* (2v) adizkiak osorik agertzen dira, bokalen asimilaziorik gabe. Azkenik, *eztadiela billa* (2v) horretan *bilatu* aditzaren erabilera iragangaitza aurkitzen dugu, orain arte Lazarragaren testuan bakarrik dokumentatzen zena: *beste amore bilatuko nax* (A4:11), *remedioa bila citecen* (A11:33).

Sintaxi aldetik, Mitxelenak (1964b: 358) aipatu bezala, aipamen merezia behar luke *niq arengatiq ateri ala ateraco dut* (2r) 'atera ahala, ahal dena atera' esan nahi duen perpausak.

Geografikoki kokatzen laguntzen dutelako, nabarmentzekoak dirateke ondoko hitzak: *erran* (*passim*), *guti*, *deus*, *zorta* (2r), *bederen* (2v) ekialde zabaleko aldaerak

dira. Ekialde zabalekoa ere baden *guibilat* (2r) aldaera ez du *OEH*k jasotzen; orobat *OEH*n *zenbit* (2r) aldaera ez da jasotzen. Testu zahar nafarren artean bakarrenetakoa da *gasna* (*passim*) aldaera.[825] Esanahi aldetik *eraguin* 'egin arazi' arkaismoa agertzen da. Bestalde, *baño* (2r) aldaerarekin *biño* (2r) darabil *OEH*ren arabera, Gipuzkoan mintzatzen den nafarrerakoa, Bortzirietakoa, Larraungoa edo Ultzamakoa dena. Nafarroan Bortzirietako aldaera da, halaber, *burdi* (2v) 'gurdi'. Bestalde, *guztiyeq* (2r) eta *guciai* (2v) agertzen da, bi aldaerak oso ohikoak Nafarroan. Amaitzeko, *ateri* (2r) 'atera' dago, gaur egun Bortzirietan erabiltzen den bezala.

Arestian aipatu dugunez, XVII. mendekotzat hartzen da testua, gutunek berek datarik izan ez arren; areago, autorea nor zen jakiteaz gain, hizkuntza aldetik gutunetako ezaugarriak ikusirik ere, mende amaierakoa dela pentsatzeko aski arrazoi ditugu. Bokalismo aldetik aski berriak dirudíten bilakabideak ikusi ditugu, testu zaharragoetan nekez topatzen direnak. Aditzez den bezainbatean, adizki aferesidunak ere ez dira testu zaharragoetan agertzen. Aipagarria dirudi aferesidun adizki hauek soilik Miguel Elizalderen gutunean daudela; izebak, aldiz, aldaera osoak erabiltzen ditu. Pentsa liteke, hortaz, bilakabidea erabat gauzatu ez dela eta gazteek gehiago egiten dituztela halakoak nagusiagoek baino. Mende berean, urte batzuk beranduxeago eta eskualde berean, Berako olagizonak ditu gisako honetako adizki gehiago (§ 2.3.4). Datu hau eta lexiko aldetik ditugun *gasna* eta *biño* aldaerak kontuan izanik, badirudi Miguelek eta bere izebak beren herriko edo eskualdeko mintzoan idatzi zutela.

### 2.3.7. Irungo Udaleko agiriko euskarazko testuak

Jarraian datozen bost testuak Irungo udal artxiboan daude E/5/111/1/1 signatura duen espediente batean, eta «Daños causados por los franceses en Fuenterrabía» darama izenburutzat. Txosten horrek bi atal ditu. Lehenak *Información de daños causados en la guerra de 1719 en Fuenterrabía* izenburua du eta, dirudienez, Donostian izandako kalteak aipatzen dira bertan. Bigarrenak *Borradores y notas sueltas sobre los daños causados por los franceses en 1719* izenburua darama eta bertan, besteren artean, euskarazko zenbait testu daude. Izenburuan Hondarribiko kalteak aipatu arren, badirudi Hondarribiko setioaren ondoren, Irungo zenbait etxetan izandako kalteak kontatzen direla (Altuna & Miranda 1995: 527). Gertakaria 1719koa izan arren, gaztelaniazko testuek eta euskarazko batek 1721ko urtea daramate; beraz, ziurrenik, urte horretan idatzi zen agiria.

Euskaraz idatzitako lekukotasun hauek Altunak eta Mirandak (1995) eman zituzten ezagutzera, testuinguru historikoaren analisi sakon eta testuen hizkuntzazko azterketarekin. Dena den, gure edizioa prestatzeko jatorrizkoetara jo dugu. Aurkeztuko dugun testuen hurrenkera ez da Altunak eta Mirandak (1995) dakarten bera. Guk agirian aurkitu bezala eman ditugu testuak, baina lekukotasun hauen kasuan ez dirudi hurrenkerak garrantzia duenik.

---

825 Edu Zelaietak adierazi digunez (ahozko kom.) egun Lapurdirekin muga egiten duten Beran eta Etxalarren bakarrik erabiltzen da *gasna*, Bortzirierako gainerako herrietan *gazta* dago.

### *2.3.7.1. Testuak*

<1> Don[826] Juan de Ólazavalen beiaq, balio situstela berrogei[827] ducat, eta berrogei[828] sorcicoren asienda belza, saldi bat ógei ducat, bioca bat dozena erdi bat escutu, ardiac eta áunzaq ogei eta amavi ducat, amavi ducaten erliac, iru escuturen ólluaq, ogei eta sei escutu erremientaq eta paciaq eta larazaq, icheco trastiaq, airçul eta erremientaq, mantilla eta óiala eta corbata bat dobloi bat. colchoia eta cosna eta mandiria eta buruqua dobloi bat, eta soñecua,[829] bi jaca eta chupa bat saspi escutu terdi. Amar[830] anega[831] arto amar escutu, golde bat ógui bederezi escutu, sacinaq eta urdaiaq eta ganzaq amar escutu, chartesac eta buruci bat[832] iru, costal escutu bi terdi.[833]

<2r> Juan[834] de Arrivillaga, Anamaria de Aramburu. Galdu tugu ógeita sorci buru auns eta ardi, senian balio situsten ogeita sorci escutu, ógeita iru escuturen lavoria, ógi ta arto, bi órga emesorci escutu, amavost escutu balio situstenaq lau cucha, iru maia eta bi silla dobloi bat balio sutenaq, Santo Christo bat eta amabirgina bat dobloi bat, porlamenos, balio[835] situstenaq, serbisioco trrasteaq, ichequaq.[836] Gusieq eun erreal porlamenos.[837] Sorsi escuturen serriaq eta escutu baten ólluaq.[838]

Santa Elenaren eta Santamaria Madalenaren[839] arropa eta sona iru escutu, bi cortina suriya eta tela pinta sei escutu, iru savala[840] aldia dobloi bat, iru bancal, porlamenos, dobloi vat, lamparaq eta candeleruaq eta binagera dobloi bat, cucha bat eta maia bat iru escutu. Eliza eta esquilla eta ichia aien escuetan geldizen dela estu iñorq[841] esamiatu.[842]

<2v> Cucha[843] bat eta maia vat eta vi silla dobloi bat eta iru erreal, porlamenos, nere propioa sei escuturen alderaco artu nubenaq, ol basubeq lau escutu terdiren. Maisa galdu nuben, icheco serbicioco enrresuaq dobloi bat, iru

---

826 Don] esk. *D$^{n}$*.
827 berrogei] esk. *berogei*.
828 berrogei] esk. *berogei*.
829 soñecua] esk. *sonecua*.
830 amar] esk. *aMar*.
831 anega] ondoren zerbait dago tatxaturik, dirudenez *terdi*.
832 bat] esk. *ba*.
833 Orriaren ezkerrezko ertzean, horizontalki, *Nicolaz de Arbelaiz y Magdalena de Aguina* jartzen du, eta euskarazko testuaren azpian zenbaki batzuk agertzen dira eragiketa batean.
834 Juan] esk. *Ju*.
835 balio] esk. *bali*.
836 ichecuaq] esk. *ichecua*.
837 Testu honen azpian alde batetik besterainoko lerro bat dago zati hau bestetik bereizteko.
838 Hemendik aurrerakoak orriaren ezkerreko ertzean, horizontalean.
839 Madalenaren] letra bat tatxaturik dago lehenengo <a> eta <d>ren artean.
840 savala] <l> eta <a>ren artean beltzune bat dago. Hori dela eta, Altuna eta Mirandak (1995: 452) *sauaba* irakurtzen dute.
841 iñorq] esk. *iñor*. Ergatiboaren marka falta da.
842 Ezkerreko marginean eragiketa bat dago.
843 cucha] esk. *cuha*.

escuturen obraq nere bisiceco eginitubenaq,[844] oia baten trresnaq bi escutu eta bi erreal.[845]

Escutan muñ egiten diot berorren[846] mesereari: aunque[847] niq meresi bagiagatiq santu gloriosa oquen amoriagatiq cuido berorren[848] meseriagana idusten dut, eser bada probechamenturiq.

<3> Eun escutu icheco oiac eta traste gusiac, echeco[849] gauza zuri guciac dacarte[850] eun escutu, beste gañaraco oia, surac, cupelac, barricac eta cuchac eta sillac eta maiza eta maia,[851] padera eta caso gusiac dacarte eun da berroguei escutu. Sorsi escuturen ganadu velza, ogei eta amavi ducat ardiac eta olluac sorci errealeco[852] vat. Eun da iruroguei eta amazei escutu munatzen dute guciac.[853]

Maria[854] Antonia de Berrozaranen bai eta dañua da au gucia. Cucha batean atera zuen canpora beteric eta an galdu zela, importazen suela eun ducat beste ambeste bañon gueiago atera zuela campora fardeletan berreun escutu valio dute oc guciac. Saldi vat eta aren echeco aparajuac berroguei escutu.

<4> Francisco[855] de Emparan y Mari Domingo de Iguinizen contuaq.[856] Avelgorrienaq irurogeita vederezi ducat, bi asienda belz lau ducat, bada eta ógia berrogei sorzi errialeco[857] icheco serbicioco trasteria, ógei ducat oia bat eta alcandora bat sei ducat, liñuaq lau ducat, olluaq ducat bat.[858]

<5> Manuel de Aramburu eta Magdalena de Ólazavalen contubaq. Erremintatan eta socatan eta bere trravajaçeco gausatan birreun ducaten dañuba, golde bi ógui, amabost anega amabost ducat, cerri óso bat eta emeresi libra ganz bos ducat, bost óllo eta óllarra eta armilla bat eta mantelin bat lau ducat, sei libra ari eta alcandora bat eta cosna bat bost ducat, oia berri baten gaia bost ducat, ate berri bat paciia calleta barrilla silla casua ispillua bost carga[859] terdico barrica bat sei ducat.[860]

---

[844] eginitubenaq] esk. *Eginitubena*. Ergatiboa falta zaio.
[845] Testuaren ezkerreko ertzean zenbaki bidezko eragiketa bat dago tatxaturik.
[846] berorren] esk. *beroren*.
[847] aunque] esk. *aunq.*
[848] berorren] esk. *beroren*.
[849] echeco] aurretik *asuriac* edo antzeko zerbait tatxaturik.
[850] dacarte] aurretik bi hizki tatxaturik, badirudi <oc> dela ezabatutakoa.
[851] maia] aurretik *silla* tatxaturik.
[852] errealeco] esk. *erealeco*.
[853] Azken esaldi hau ez dago goikoaren batera, aurrekotik lerro batek bereizten du eta orriaren eskuinean dago, zutabe moduan.
[854] Testu zati hau aurrekotik bereizteko alde batetik besterainoko lerro bat dago.
[855] Francisco] esk. *Fran.*
[856] contuaq] esk. *cotuaq*.
[857] errialeco] esk. *erialeco*.
[858] Testuaren ezkerreko ertzean eragiketa bat dago, eta testuaren azpian *y 40rr de ôcho* jartzen du. Beherago, izen batzuk eta beste eragiketa bat agertzen da.
[859] carga] jarraian letra bat du tatxaturik.
[860] Azpian eragiketa bat dago eta, ondoan, *año 1721* jartzen du.

*2.3.7.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, <u> grafemak duen balio kontsonantikoa aipagarri da: *amaui*, *Arriuillaga*, *amauost*. Dena den, badirudi hitz barruan, bokal artean, bakarrik dela kontsonante. Hori dela eta, agidanean, *Saldi uat* bereizirik agertzen bada ere, hitz bakartzat edo, behintzat, zenbatzailea izenari lotuta, hartu zuela testuon egileak. Gainerakoan, hitz hasieran beti <v> eta <b> ageri dira. Bestalde, <v> balio bokalikoarekin ere erabiltzen da: *vrdaiaq, av*, *evn*. Dardarkariak islatzeko <r> eta <rr> erabiltzen dira bakuna eta anizkuna islatzeko, hurrenez hurren. Hala ere, batzuetan anizkuna islatzeko <r> agertzen da: *berogei*. Gainera, maiz kontsonante osteko dardarkaria islatzeko ere <rr> erabiltzen du: *trrasteaq*, *trresnac*, *trravajaçeco*. Horrezaz landa, <g> eta <gu> biak erabiltzen dira <i> eta <e> aurretik hots bera islatzeko: *ogui*, *berroguei*, *iruroguei* eta *egiten*, *ogi berrogei*, *ogei.* Hitz amaieran <q> erabiltzen da herskari ahoskabe belarrerako, baina ez beti: *Beiaq*, *aunzaq*, *ólluaq*, baina *ardiac*, *erliac*. Amaitzeko hainbatetan hitz hasieron <ô> agertzen da, diakritikoarekin: *Ôlazavalen*, *ôgei*, *ôlluaq*, *ôiala*… Adibide batean <â> dago: *âunzaq*. Ez dakigu zehazki zer islatzen duen diakritiko horrek, baina ez dirudi azentua islatzeko denik.

Fonologiaren arloan, bokalei dagokienez, *icheco*, *iche* adibideek sabaikari aurretik *e-* > *-i* egin dela erakusten dute, baina *echeco* ere agertzen da bi aldiz. Bestalde, *ea* > *ia* eta *oa* > *ua* bilakabideen adibide ugari ditugu: *erliac*, *trastiaq*, *maindiria*, *buruqua*, *sonecua*. Hala ere, ez da sistematikoki egiten aldaketa: *propioa*, *trasteaq*, *erreal*, *batean*. Horrezaz landara, hiatoak saihesteko *u* + *B* > *ubB* gertatu da: *nubenaq* 'nuenak', *basubeq* 'batzuek', *eginitubenaq* 'egin nituenak', *contubaq*. Beste kontsonante batekin, baina gisa bereko epentesia bide da *idusten* adibidean duguna: *iusten* > *idusten* 'uzten' (ik. Miranda & Altuna 1995: 540).

Txistukari igurzkarietan apikariaren aldeko neutralizazioa oso indartsu gertatzen da: *situstela*, *sorcico*, *saldi*, *saspi*… Salbuespenak badira halere: *Ólazavalen*, *dozena*, *eliza*. Grafikoki afrikatuak bereizteko saiakerarik ez dago (cf. adibidez *larazaq*, *geldizen*), eta igurzkarietarako erabilitako grafema berberak agertzen dira afrikatuekin. Dena den, ozen ondotik afrikatua egiten dela ikusten liteke. Oro har, igurzkarien artean apikariaren aldeko neutralizazioa dagoen arren, ozenen ondotik ez dago neutralizaziorik: *sorcicoren*, *belza*, *âunzaq*, *ganzaq*, *sorci*, *emesorci*, *velza*, *sorci*, *belz*, *sorzi*, *ganz*. Hiru salbuespen ditugu *auns* eta bitan *sorsi.* Kronologia baterako balio diezaguke horrek: *nz* > *ntz* bilakabidea *z* > *s* baino lehenago gertatu da. Bestalde, *d* > *r* duten bi adibide ditugu: *mesereari*, *meseriagana.* Kontsonante multzoetan **-rzt-* > *-st-* dago: *amavost*, *beste*, *ambeste*. Amaitzeko, latinezko maileguetako *-ione* > *-oi* egiten da, ez *-on* nafarra: *colchoi*, *dobloi*.

Izen morfologiara pasatuz gero, lehen graduko erakuslea *(h)ok* aurkitzen dugu: *oc guciac*. Gainera, kasu markak eta postposizioak absolutibo pluralaren gainean eransten dira plurala egiteko: *santu gloriosa oquen* 'santu gloriosa hauen'.

Aditz morfologiaz den bezainbatez, **edun*-en adizkietako ergatiboaren pluraleko morfema *-te* da: *dute*. Gainera, adizki aferesidunaren adibide bat aurki daiteke testuan: *Galdu tugu* 'galdu ditugu'.

Sintaxi aldetik, genitibozko objektu zuzenaren kasu bat dugu: *nere bisiceco eginitubenaq*. Horrezaz gain, genitiboa erabiltzen da zerbaiten balioa adierazteko: *berrogei sorcicoren asienda belza*, *iru escuturen ólluaq*, *iru escuturen lavoria*, *Sorsi escuturen serriaq*, *sei escuturen alderaco artu nubenaq*, *iru escuturen obraq*, *sorsi escuturen ganadu velza*.

Lexiko aldetik, interesgarri dira Irungo testuok, garaiko beste testu nafarretan agertzen ez diren hitz eta aldaera asko baitaude; hauek, besteak beste: *airçul* 'aitzur', *bancal* 'mahai-tapiza', *bioca* 'behor gaztea', *buruci* 'guraize', *cosna* 'koltxoi', *pacia* 'eltzea, pertza', *savaba*, *sona*; azken bi hitzon esanahia zein den ez dakigu. Azkenik, *santu* aldaera agertzen da, ez *sandu* nafarra.

Amaitzeko, esan daiteke testua garaiko bizimoduaren isla zuzena dela. Arestiko hitzek hala erakusten dute, eta orduko diru-moten lekuko ere bada. Testuan ikusten denez, *erreal*, *ducat* eta *escutu* erabiltzen dira.

### 2.3.8. 1729ko sermoia

Goi-nafarreraz idatzita dagoen den lehen sermoi ezaguna 1729an irakurri zen. Otsagabian (Zaraitzu) aurkitu zuten, *Maestroviejo* deitzen zaion etxean (ik. Ondarra 1981). Ez dakigu nork idatzi zuen sermoia, ezta predikaria nongoa zen ere, baina badakigu 1729koa dela (Ondarra 1981: 147). Ondarrak (1981) berak eman zuen ezagutzera edizio semipaleografiko batean, faksimilerik gabe. Testua Zaraitzun aurkitu bazen ere, hizkera ez da bertakoa:

> Creemos que está redactado en el euskara calificado como dialecto *alto navarro meridional,* cuyo centro geográfico era Pamplona y que se extendía todavía en el siglo pasado desde *Burguete* hasta por lo menos el valle de *Ilzarbe,* que limita con *Artajona,* y el valle de *Guesálaz* en la *Merindad de Estella.* No está escrito en el vascuence de *Ochagavia,* que es un subdialecto del dialecto *bajo navarro,* ni tampoco, así lo creemos, en el vecino de *Aézcoa,* subdialecto del mismo dialecto *bajo navarro.*

Sermoiak hamasei orrialde ditu eta bi zatitan banaturik dago. Lehenengo zatiak Santiago Apostoluaren pribilegioez dihardu. Bigarren zatian, aldiz, uzta datorrela eta hamarrenak ordaintzeko obligazioez hitz egiten du predikariak. Esan dugunez, sermoi hau da ezagutzen den goi-nafarreraz idatzitako sermoi zaharrena.

Faksimilerik edo jatorrizkorik ikusteko aukerarik izan ez dugunez, Ondarrak argitaratutako edizioan oinarritu gara gurea egiteko, baina § 2.1 atalean finkatutako irizpideei jarraitu diegu. Halere, egin dugun aldaketa oro aparatu kritikoan aipatu dugu, eta O batez eman dugu Ondarrak dakarren forma.

#### *2.3.8.1. Testua*

<1r> Jhs

En el día de Santiago Apostol a 25 de Julio de 1729.

Dic ut sedeant hi duo filij mei vnus ad dextram et alius ad sinistram in regno tuo. Matthaei. 20.

Zerbait errateco egungo festividadearen eta Santiago apostoloaren izenean, argui dezala ene entendamentuau Espiritu Sanduac. Compon ditzala ene itzac Cristo gure jaunac eta prepara dizala zien viozac Aita Eternuac. Eta ala, nola baitire irur persona distintoric eta Jaungoico bat verdaderoric guciac igual, guciac sabio, guciac poderoso, guciac misericordioso igualqui, arla conforma gaizala bere amistanzan eta gueure[861] ermandadean. Neure obligacioarequin

[861] gueure] O *geure*.

cumpliceco, asi gogo dut egun jaietaco ebangelioen esplicacen. Ezauzcen dut lenago bear nuela asi trabaju gau, vaña uscararen escasiarequin eta ene osasunaren firmeza gutiarequin disculpatu dut neure buruau orai artio. Jangoicoac iduqui dezala misericordia nitas, eta didala bere gracia atraceco faltac emendic alcina. Eztezaquet uca zien inclinacio onac eta docilidadeac iduqui nauela cuidado gutirequin, zerengatic iz bates disponitu zarate bi aldis comecacera[862] eta arla ontas emanten diciet graciac Jesu Christo aldarean dagonaren partes.

<1v> Deseo dut, bada, egun esplicatu Santiago apostoloaren festividadea, zeinec vaititu irur puntu. 1. Ebangelioa eta Santiagoren privilegioac. 2. Gure aprovechamentuan erranen dut cerbait. 3. Irurgarrenean iminico ditugu cembait exemplo gueldi daitecen memorian ocasioetan aietas valiaceco. Vaña egun eta seculaco nai diciet eman abisu bat importacio anditacoa. Predicuac vear tucie artu deseo andi batequi izan daitecen zuen provechutan, ai nola bapedraren vailerduca predicazaleac. Eta erraten duenean Jesu Christoc diola alaco gauza San Pablorena edo San Agustinena edo verce cembait sandurena, dela conseju gau edo vercea, vear da eguin contu Jesu Christo edo sandu gura dagola zuri erraten consejuaren <2r> eta aren agotic bezala artu abisu gura: «Zatoste». Cer caso eguiñ guindiro orai emen xarri[863] baledi San Paulo predicacen? Ezta dudaric atencio andiarequin adi guindirola; bada, eztu gueiago dionean predicazaleac San Pablo escribaturic uci[864] zuen sentencia. Orai, bada, abisu gonequi[865] eta principio gonequi vear dugu sartu egungo irur puntaen[866] explicacen. Eta nic ongui eguiteco eta ziec aprobechaceco esca zagun ainguiru guzien erreinaren[867] eta vecatari gucien amaren assitencia eta gracia, eta erran zogun ainguiru San Gabrielec erran cion becala: «Ave Maria».

*Dic ut sedeant hi duo filij mei vnus ad dextram et vnus ad sinistran* <2v> *tuam in regno tuo Matth. c. citato.*

Ama bát dá egungo ebangelioaren assenumptoa[868] ...[869] Dio San Mateo ebangelistac juan cela egungo egunean Zebedeo ceizolaco guizon baten andrea Christo gure jaunari bere bi semerequin,[870] eta erran cio: «Jauna, aditu dut erregue zarela eta premiazalea. Ni naiz aide[871] eta, arla, dacazquit bi seme mana zazun jarri daitezela batau escuieco[872] aldean[873] eta berceau ezquerre-

---

862 comecacera] aurretik *confessa* dakar Ondarrak.

863 xarri] O *xari*.

864 uci] O *vri*.

865 gonequi] O *goniequi*. Ez dakigu zergatik dakarren Ondarrak <i> etzana, baina testuan gehiagotan erabiltzen du *gonequi*.

866 puntaen] O *punta en*. Ez dakigu hutsa den eta, beraz, *punten* behar lukeen ala bokal soiltzeen aurreko egoera baten isla den.

867 erreinaren] O *ereinaren*.

868 assenumptoa] jarraian *sic* laburdura dakar Ok.

869 …] ez dakigu eten puntu hauek zer diren, Ondarrak hala dakar eta, horregatik, mantendu ditugu.

870 semerequin] O *semerequ n*.

871 aide] *sic* dakar Ok.

872 escuieco] O *escuilco*. Zuzendu egin dugu; cf. beherago *escuian*.

873 aldean] Ok *aaldean*.

coan, zure erreinuan». Erran cio Jesusec:[874] «Eztaquicie cer escacen ducien». *Nescitis quid petatis*. O, cembat aldis guertacen zaigun guri berce ainberce! Uste zue Zebedeoaren andreac Jesuchristo cela oraico erreoc[875] bezala, eta nai zuela mundu gontan imini bere gloria eta erreinua, vaña Christo aunque erregue vace ere, ez zue nai mundu gontan eracussi vere poderio eta magestadea, vaizican humildadea, paciencia eta mortificacioa. Discurricen zue Jesucristoc nola padecitu mundu gontan, eta discurricen zue ama garrec nola icussi bere semeac acomodaturic mundu gontaco honrraric andienetan, eci esta oraicoa amac ero izate beren humen combeniencia eta honrraetan, vaña descubriaraci ciote gure jaunac beren engañua eta ignorancia erranes: «Estaquicie cer escacen ducien, *nescitis quid petatis*. Ignorancian zaute, federic estucie estu mundu gontaco[876] descansuetan pensatu bear ene escuian xarri bear duenac, vaicican trabajuetan, mortificacioan, pobrezan eta gaiz gucietan bear du exercitatu <3r> ene erreinuan egon vear duenac». Au da egungo ebangelioaren sustancia.

Eta emen eracusicen digu gure jaunac cer bear dugun escatu eta nola vear diren izan gure oracioac, ceren guc escacen badiogu Jangoicoari[877] interessa, honrra eta dignidadea, estugu deicen Jangoico vaicic interessa. Ala dio San Agustinec: «*Quando Deo petimus temporalia, non deunsed illa capimas*». Vear du, bada, izan gure peticioac conformea Jaungoicoaren borondatearequin. Vear tugu escatu lembissicoric arimaren ondasunac, vear dugu lembissicoric aseguratu Jangoicoaren erreinua, baita gracia eta mistanza berea. Eta, arla, dagoquigu eracusten aitagurea, erraten dugunean egunoro: «Etorri bedi zure erreinua». Veira zocie nola escacen dugun lenbissicoric[878] Jangoicoaren erreinua, vaita bere gracia, eta guero dugu licencia escaceco, combeni delaic, gañeraco gauzac.

<3v> Orai, bada, bi seme goietaric bata ce Santiago apostoloa[879] eta bercea San Juan apostolo eta ebangelista; por cierto,[880] ama dichosa alaco semeac izan cituena. Vataren festa dugu egun eta, arla, erranen dugu cerbait bere privilegioes. Lendabissico privilegio Santiagorena da izan cela Ama Virginaren elloba, ceren Santiagoren ama izan ce Ama Virginaren lengusia. Eta, arla, izan ce Jesu Christoren vigarren lengusu. *Joannes quidem certa praerrogatiua diligitur a V. Virgine, et a Xpto tanquam consaguineus*. Vigarren pribilegioa da deicen dela Santiago Andiena, verceari dioten vecala Chiquiena. Eta au vi arraciorengatic. Lembissicoa, lenago deitu baizue gure jaunac apostoladora eta, bigarrena, Jesu Christoc eguin zuen estimacioagatic,[881] ceren bere secretu gucietan erabilcen zue berequin. Eta, arla, au deitu zue laguntaco nescaco bat ilic bisteco eta transfiguratu cenean. Irurgarren privilegioa da apostolo gu-

---

874 Jesusec] O *Jesus ec (sic)*.

875 erreoc] *sic* laburdura dakar Ok. Ez dakigu zehatz zer den, baina testuinguruagatik *erregueoc* edo antzeko zerbait dela dirudi.

876 gontaco] O *gontacon (sic)*.

877 Jangoicoari] O *Jangoicori*. Halere, *sic* dakar jarraian Ondarrak.

878 lenbissicoric] O *len*bissicoric.

879 apostoloaa] O *apostolo*aa.

880 por cierto] O *procierto*.

881 estimacioagatic] O *estimaciongsatic*.

cietaric lembissicoa izan ce zerura joan cena, cerengatic lenago pasatu baizue martirioa eta, San Calistoc dion conforme, il ce marchoaren oguei eta borzgarrenean, vaita eguna gure erredentorea <4r> guizon eguin cena eta il cena. Laurgarren privilegioa dá gauza bat andia, eci izanic apostoloac amabi, guciac sandu andiac, eta izanic munduan aimberce sanduren gorpuzac, eguiten diote Santiagoc ventaja debocioan eta peregrinacioetan bere gorpuzaren visitacera etorris, ez solo España gucitic, solo Francia, Italia eta Portugal eta mundu gucitic, eta vatec eguiten badu voto Santiagoren gorpuza visitaceco, solo Aita Sanduac dispensa dezoque.[882] Eta da ain andia debocio gau eci Santiagoc asisticen diote peregrinoei mundu gontan eta bercean bere meregimentu guciequi defendatus peligro gucietan ures eta lurres. Vaña berce sanduec estute[883] privilegio gau, aunque San Pedro eta San Pauloren visitaceco votoec vadute dispensaceco igual dificultade ere. Vorzgarren pribilegioa da compondu zuela articulo bat baita concebitu ce Ama Birginaren entrañetan, Espiritu Santu[884] jaunaren obras eta jaio ce. Arla, ceuca erranic profeta Baruceq: «*C. Posthaec in terris vissus est et cum hominibus conuersatus est*». Seigarren pribilegioa da egunoro mezan escacen baitugu Santiagoren asistencia. Zazpigarrena, egun eguiten dela mundu gucian Santiagoren[885] festibidadea solemnequi,[886] eta Españan particularqui vaita emengo Patrono. O, apostolo dichosoa, norc erran lezqui zure alabanzac dignoqui? Dei gaizazu zerura, an xaquin zagun zure gloria eta pribilegio guciac.

<4v> Bigarren punturaco vear dugu adbertitu nola eldu baita eraicioaren bilcea eta amarren primicien eguiteco dembora, anicec eguiten tustela becatu mortaleac eta andiac ez ongui eguiteas Jaungoicoaren zor gueben paguac. Eta, arla, ignorante dagonaren adberticeco erranen dut brebequi[887] cerbait amarren eta primiciaren gañan.

<5r> Orai, bada, entenda zacien ongui eztela apezen interessa gauza gau, vaicic zeure arimen provechua, eta Jaungoicoari zor zaiola fuertequi. Erremedioric gabe erranen dut noiz assi ciren jendeac amarren eguiten eta cer maldicioac dauzquien[888] egoziric Jaincoac[889] ongui eguiten estitustenendaco. Hizan zute, bada, primiciec principioa orai sei mila eta iago urte, eta lembissico eguin zuena izan ze Abel Adanen semea. Elizan ofracea asi ce orai laur mila urte, eta lembissic[890] ofratu zuena izan ce Noe. Amarrenac asi cire andic fite, eta lembicic[891] eguin cituena izan ce Abrahan, norc Jangoicoaren errebelacios eguin zue gauza guzietaric amarren Melchisedec Sacerdoteari. Orai, bada, es-

---

882 dispensa dezoque] O *dispensadecoq*.
883 Estute] O *estu (sic)*. Subjektua plurala denez, *estute* esperoko genuke.
884 Espiritu Santu] O *Espiritu S*.
885 Santiagoren] O *Snbtiagoren*.
886 solemnequi] O *solemnequin*.
887 brebequi] O *brebequi*n.
888 dauzquien] O *daucquien*. Dirudienez, <c> txistukaritzat hartu behar, alegia, *dauzkien*.
889 Jaingoac] *sic* Ok.
890 lembissic] *sic* Ok.
891 lembicic] *sic* Ok.

cucha zazquicie guizon torpe gaiec[892] erraten dutenac apezec beren probechuagatic imbentatuac direla gauza ebec. Dagoquigunean erraten Jangoicoa Christo jaio baño len bi milla urtes eta iagos eguin zagula amarren primiciac. Adi zazquicie Jangoicoaren agoco iz bazuec: «*Inferte omnem decimacionem in horreum meum, ut mala hia 3. sit cibus in domo mea*». Uscaras nai du erran: «Eramacie amarren gucia ene granerora, izan daien cer xan[893] ene echean». Au erran zue Jangoicoac Christo mundura etorri bague, vaña eczue Christoc uczi orla yago caaso[894] eguin vague gauza bat ain importancioscoa. Eta, arla, manatu zue eguin ceitecela amarren primiciac faltatu gabe agoz bat: *Reddite quae ss (sunt) Caesaris, Caesari, quae sunt Dei, Deo. Mat c. 10.*

<5v> Eta arracioac[895] emanten du, eman daquioten beren necesarioa viciaren passaceco, gure arimes cuidaceco solo daudeneri. Eta, arla, dio San Pauloc I. Corinth. 9: «Guc gauza espiritualeac ematen badiciegu, esta marabilla ciec digucien guri gauza carnaleac, gutiago valio dutenac infinitoqui». Eta arracio gonen casos, dio San Tomasec gauza gucietaric eguin bear dela amarren. Eta, arla, da <6r> usanza lenecoa, vaña orai edo guizonen codiciac edo Elizaren eta apezen misericordiac introducitu du estaien eguin lenas dina gauzas amarren. Eta, arla, licitoqui guelditu zarate[896] emen eguin vague amarren fruita gucies eta abeguendes eta ceuren industrias erabaciten ducien dirues, vaña ciertoqui zauta obligaturic amarren eguitera grano gucies, eta elzari eta liguguende[897] gucies, olibes eta animale larri gucies, esneguendeas, elleas eta acienda xe gucies, acienda balces. Au guciau conformatus len ducien costumbrera delaic ona eta ongui introducitua, eci gaistoas esta casoric eguin vear.

<6v> Orai asi bear dut San Agustinen agotic predicacen eta cuidado lenbissian[898] erran nicienas. Irur ondasun andi, dio San Agustinec, ditu ongui chuxenqui eta gauza onas amarren primiciac eguiten tuenac. Lembixicoa: mundu gontan izulzen dio Jaincoac abundancia andiarequin ematen duena, vere eraicio guciac izanen dire abentajatuac, animaleac iblico dire ongui, estu izanen desgracia bat, estu arriac arrasatuco eta abrastuco da nola estaquiela. Eta dio lenagoco gure antepasatuac gauza gucies ceude abundante, cerengatic amarrenac eguiten citusten ongui. Bigarrena da gorpuzaren osasuna eta, arla, ongui eguiten tuenac amarren primiciac ez solo izanen da abrax, solo izanen du osasuna firmea. Irurgarrena eta principalena da arimaren provechua, cerengatic ongui eguines amarren primicia erdexten da vecatu gucien varcacioa eta cerua eta gotico gonen uziceas erdechicen tu Christioac ceruco premio guciac. Ebec dire San Agustinen agotic irur ondasunac: lembixicoa, abrastea; vigarrena, osasuna izatea; irurgarrena, cerura joatea. Vaña ai zagun, alcina, cer dion san andi gonec ongui eguiten estitustenes.

---

[892] torpe gaiec] O *torpegaie*n.

[893] xan] «Con acento agudo sobre la *-x-*.» (Ondarra 1981: 171, 14. oharra)

[894] caaso] «No estamos seguros de su lectura, tal vez haya que leer *caaso*, siendo seguras las dos últimas letras *-so*» (Ondarra 1981:171).

[895] arratioac] O *arratioac (sic)*.

[896] zarate] O *carate*. Agidanez, <c> txistukaritzat hartu behar da.

[897] liguguende] O *ligugende*.

[898] lenbissian] O *lebissian*.

<7> Amarren primiciac. Irur dañu horrorosotan erorcen da estuena eguiten ongui Jaingoicoarenzat[899] guebec. Eta lembixicoa da Jaingoico omnipotente eta andi garen maldicio bat: «Cerengatic», ai zacie cuidadorequin, «cerengatic estizquidatan[900] eguiten ongui amarenac, orrengatic ematen diat neure maldicioau: goseac eta trabajus vici adila veti». Jaincoac ofreciturіc dauzqui desgracia guciac alacoendaco. Ilcen bada animalea, mandoa edo idia, edo arriac eramanten badu norbait, dio San Agustinec, esta berce arracioric, cer bilatu baicic; ez ongui eguina amarrenac eta, arla, cerengatic ezuen nai eman amartaric bat, quencen dizquio[901] Jaincoac bedraciac eta gueldicen da pobre, eta ez solo pobre, baicica[902] erorcen[903] da berce bigarren maldicioan, baita osasunaren galcea. Eta, arla, estute izanen oron bateco osasunaric. Eta iago dena: alacoec eguiten dute becatu mortale, offendicen dute gure jauna, eiten dute burla bere justicias, errenobacen dizquiote[904] llagac Jesu Christori, alacoac estaitezque absolbitu, eztaitezque comeca iolatreco maneras añaditu gabe sacrilegioa sacrilegioari. Eta dio Christoc naiago luquela sartu zaldis beteric dagon estrabi batean an oincazca dezaten, eci ongui amarrenac eguiten estituenaren agoan. O, Jesus ene biozecoa! Cein pizu guti eguinic bici garen orai artio! O, icusi al baleitez emen dauden concienciac eta cein ciquin bide dauden bear bada. «Jauna», erranen ducie, «nic, ustes, estut[905] gauza gortan deus ere.» A! Verandua da aniz[906] xarduquiceco, baña veldur dut. Ojala estaiela arla izan, vaña veldur dut zien pobreza eta desgracia guciac direla ez ongui eguines amarrenac. Cer ongui eguitea da amarrenac, farrasca guciac egozicea amarrentaco, veti beldurrac icusi dezaten amarrena, veti gauza superflo bat vecala beiratus Jangoicoari eman bear zaionari. O, escusac demonioc inventatuac! Juicioco egunera citacen zaitustet ceuren <8r> escusa guciequin, an xaquinen dugu balio duten. Gogotic eguin valedi, ongui eguin leiteque amarrena.

<8v> Vada, cer iduri zaicie orai zuen lenagoco amarrenes? Eta cer proposito daucacie alcineraco? Esperanza dut vear duciela emendatu, bear duciela abrastu osasuna izan eta ceruan sartu eta obequi entenda zacien predicu gau, adi zacie exemplo gau.

*Finis*

### *2.3.8.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, batzuetan afrikatuak igurzkarietatik bereizten dira. Hori horrela, afrikatu bizkarkaria islatzeko <tz>, <zc> eta <cz> digrafoak erabiltzen dira; apikarirako, aldiz, <ss>: *ditzala*, *itzac*, *ezauzcen*, *eracussi* (2v), *eczue*, *uczi* (5r). Halere, horiekin batera, *dizala* eta *esplicacen* (1r) eta beste zenbait adibide ba-

[899] Jangoicoarenzat] O *jangoicarenzat*.
[900] estizquidatan] O *esticquidatan*.
[901] dizquio] O *dicquio*.
[902] baicica] O *baicica (sic)*.
[903] erorcen] O *errorcen*.
[904] dizquiote] O *dicquiote*.
[905] estut] O *estus (sic)*.
[906] aniz] O *anic*.

dira, afrikatuaren bereizketa grafikorik gabe. Txistukari sabaiaurrekoari dagokionez, afrikatuan <ch> dator <x> igurzkaritik bereizteko; hona bi adibide: *chuxenqui* (6v) eta *lembixicoa* (*passim*). Batzuetan <x> afrikatua islatzeko ere erabili da: *abrax* (6v). Igurzkariei dagokienez, <s> dago apikarirako eta <z> eta <c> bizkarkarirako; azken hori <e> eta <i>-rekin bakarrik. Batzuetan <c> erabiltzen du txistukari bizkarkaria islatzeko, kontsonante aurretik edo hitz hasieran <a>-ren aurretik: *daucquien* (5r), *carate* (6r), *esticquidatan* (7). Bestalde, <h> espletiboren bat ere agertzen da testuan: *hizan* (5r).

Fonologiari dagokionez, bokalen artean berrikuntza nabarmenena *ue* > *ie* bilakabidea da, ezbairik gabe: *zien*, *ducien (passim)*, *diciet* (1r, 1v), *tucie* (1v), *ziec* (2r), *estucie*, *eztaquicie* (2v). Dena den, hori bigarren pertsonako adizkiekin eta izenordainekin bakarrik gertatzen da (cf. § 3.2.2.2.11). Bestalde, *oa* > *ua* bilakabidea jasan du ondoko adibideak: *juan* (2v). Bokal bilkurak, oro har, soildurik badira ere, *honrraetan* (2v) eta *puntaen* (2r) ditugu. Hasperenik ez denez, hori galtzeak eragindako hiatoa saihesteko *-g-* gehitu da: *agotic*, *liguguende* < **lihugende* (6r). Horrezaz landa, sinkopa aski indartsua da: *arla*, *atraceco*, *abrax*, *abrastea* (6v), *amartaric*, *bedraciac*, *iolatreco* (7) eta, agian, *iblico* (6v). Bokalekin amaitzeko, ia Nafarroa osoa hartzen duen *o-e* > *o-o* bilakabidea gertatu da *oron* (7) hitzean.

Oro har, txistukariak ongi bereizten diren arren, herskari aurretik neutralizatu egiten dira; ez, haatik, sistematikoki: *zatoste* (2r), *estitustenendaco* (5r), *estute*, *estaitezque* (7), baina jarraian *eztaitezque* (7). Bestalde, zalantza dago **j-* zaharraren ahoskera zein den: *xaquin* (4r), *xan* (5r), *xarduquiceco* (7), *xaquinen* (8r), baina *jaietaco* (1r), *juan*, *jarri* (2v), *joan* (3v) eta *jaio* (4r) ere badaude sermoian. Grafia horien arabera, ahoskera sabaiaurrekoa edo belarra izan daiteke. Bokal artean, herskari ahostunak eta dardarkari bakuna galtzen da batzuetan: *veira* 'begira' (3r), *delaic*, (3r, 5v), *ai* 'adi' (6v), *eiten*, *beiratus* (7). Kontsonante multzoei dagokienez, *-rz-* mantentzen da *verce*, *vercea*, *vorzgarren* (3v) adibideetan, besteak beste. Fonologiarekin amaitzeko, hegoaldeko goi-nafarreraz ohikoa den maileguetako *-ale* aipa daiteke: *animaleac* (6v), *animalea*, *mortale* (7). Orobat, *iagos* 'gehiagoz' (5r) eta *iago* 'gehiago' (5r, 7). Arkaismo gisa, *vecala* (*passim*) herskaridun aldaera mantentzen da.

Morfologiara pasatuz gero, erakusleetan hitz hasieran herskari ahostuna duten aldaerak aurkitzen ditugu: *trabaju gau* (1r), *conseju gau* (1v), *abisu gura*, *principio gonequi* 'printzipio honekin' (2r), *sandu gura* (2v), *zor gueben* 'zor hauen' (4r), *guebec* 'hauek' (7), baina *gauza ebec* 'gauza hauek' (5r). Aitzitik, izenordainek ez dute herskaria hitz hasieran: *Ebec dire* 'hauek dira' (6v). Erakusleak horiek izanik, badirudi lehen graduko artikulu hurbila erabiltzen dela: *ene entendamentuau*, *neure buruau* (1r), *batau*, *berceau* (2v). Mugagabearen erabilera nabarmena da *izate* (2v), *Jangoico* (3r) adibideetan; aldiz, *conformea* (3r) eta *verandua da* (7) adibideetan artikulua hedatu dela ikus daiteke. Posesiboei dagokienez, lehen pertsonan *ene* eta *neure* agertzen dira singularrean, eta pluralean *gueure* dago. Hala ere, bigarren pertsona pluralean *ceuren* (7) pleonastikoa dugu. Horrezaz landara, adjektibo gisa ageri denean, *handi* mugagabean erabiltzen da: *importacio anditacoa* (1v). Ergatiboko plurala egiteko *-ek* aldaera baliatzen da: *alacoec eguiten dute becatu mortale* (7). Instrumentalean sistematikoki aldaera apikaria ageri da: *bates*, *ontas* (1r), *aldis* (1r, 2v). Gainera, bizidunen kasuan *-tas* dago: *nitas* (1r). Datibo pluralerako *-eri* dator *daudeneri* (5v) adibidean, baina *peregrinoei* (3v) ere badago. Destinatiborako *-endako* lekukotzen da: *estitustenendaco* (5r),

*alacoendaco* (7). Bestalde, behin bada ere, badirudi genitiboa erabiltzen dela destinatiboan: *bapedraren vailerduca predicazaleac* 'bapederarentzat bailerduka predikatzaileak' (1v). Ablatiboan *-etarik* zaharra mantendu da: *goietaric* (3v), *gucietaric* (3v) eta *amartaric*. Soziatiboan *-rekin* erabiltzen da sistematikoki: *obligacioarequin*, *escasiarequin*, *gutirequin* (1r), *andiarequin* (2r). Azkenik, prolatiboan *-tako* atzizkia dago: *laguntaco* (3v), *amarrentaco* (7).

Aditz morfologiari dagokionez, aditz-izenetan *-nten* ageri da hiru aldiz —*emanten* (1r, 5v) eta *eramanten* (7)—, baina *erraten* eta *ematen* (*passim*) ere erabiltzen dira. Horrezaz gain, *-i*-z bukatzen diren aditzekin partizipioan oinarritzen da aditz-izenak osatzeko: *eracusicen* (3r), *erabaciten* (5v), *egozicea* (7). Geroaldian sistematikoki *-en* erabiltzen da *-n*-z amaitzen diren aditzekin: *erranen* (*passim*) eta *izanen* (*passim*). Jokatuetan, *izan* aditzaren hirugarren pertsona pluraleko adizkietan *dire* (*passim*) dugu, ziurrenik analogiaz. **Edun* aditzaren erroa sistematikoki *-u-*: *dut* (*passim*), *dugu* (*passim*). Trinkoei gagozkielarik, *jarduki* aditza jokaturik aurkitzen dugu, behin bada ere: *vailerduca* 'jardungo balu' (1v). Bestalde, jusibo trinkoa lekukotzen da: *didala bere gracia atraceco faltac emendic alcina* (1r). Iraganean sistematikoki amaierako *-n* galtzen da: *erran cio*, *uste zue*, *izan ce*, *ceuca*. *Eduki* aditzaren forma trinkoetan pluralgilea *-zki* atzizkia da: *dauzquien*, *dauzqui* (7). Trinkoen erabilera murrizten ari delako seinale da *etorri* aditzaren forma trinkoak ordezkatu dituen *eldu baita* (4v) egitura.

Perifrasiez den bezainbatean, adizki aferesidunak erabiltzen dira testuan; hauek besteak beste: *vear tucie*, *vear tugu*¸ *eguiten tustela*, *eguiten tuenac*, *erdechicen tu*, *xaquin zagun* (4r), *entenda zacien* (4v), *eguin zagula* (5r). Halere, **ezan* aditz laguntzailearen kasuan ez da sistematikoki egiten: *argui dezala*, *compon ditzala* (1r). Adibideokin eta ondoan datozenekin ikus daitekeenez, indikatiboaz lekora, perifrasietan aditzoina mantentzen da: *prepara dizala* (1r), *gueldi daitecen* (1v). Multzo horretan, NOR-NORK sailean **iron* aditza ere lekukotzen da: *eguiñ guindiro*, *guindirola* (2r). **Edin* aditzaren adizkietan *ei* diptongoa mantentzen da: *icusi al baleitez* (7), *eguin leiteque* (8r). Indikatibotik landako NOR-NORI-NORK sailean **ezan* erabiltzen da: *erran zogun* (2r), *veira zocie* (3r) *dispensa dezoque* (4r). Hitanoko formetan tokako *-k* → *-t* egin da: *estizquidatan* 'ez dizkidaan' (7) (< ez dizkidak + en). Aditzekin amaitzeko, **ezan*-en adizkietan, *-it-* → *-zki-* egin da: *lezqui* 'litzake' (4r), *zazquicie* 'itzazue' (5r).

Sintaxi aldetik, badirudi Linschmann-Aresti legea betetzen dela: *Arla, conforma gaizala bere amistanzan eta gueure ermandadean*; *Neure obligacioarequin cumpliceco, asi gogo dut egun jaietaco ebangelioen esplicacen*; *ene osasunaren firmeza gutiarequin disculpatu dut neure buruau orai artio* (1r). Bestalde, TOGEN egitura erabiltzen da, eta horren adibide hauexek ditugu: *primicien eguiteco* (4v) eta *osasunaren galcea* (7). Horrezaz gain, ez dirudi aditzarekin pluraleko komunztadura nahitaezkoa denik: *guc gauza espiritualeac ematen badiciegu* (5v). Baldintzazko perpausetan, protasian perifrasi zaharra agertzen da: *eguin valedi* (8r). Aurkaritzako perpausetan, *baicica* (7), *vaizican* (2v bi aldiz) eta *vaicic* (5r) hirurak ageri dira testuan.

Lexiko aldetik, azpimarratzeko dira *eraicio* 'uzta' (4v), *agoz* 'ahotz, lasto' (5r), *elzari* 'eltzekari' (5v), *estrabi* 'estalpe' eta *farrasca* 'hondakin, zakar' (7) hitzak; Nafarroan ongi lekukotzen dira. Horiezaz landara, aipagarri da *-gende* agertzen dela '-ki', '-gai' adierarekin: *abeguende* 'hegaztiki' (5v), *liguguende* 'lihoki' (6r) eta *esneguende* 'esneki' (6r). Zalantza eragiten digu *acienda balces* (5v) horretako azken hitzak, ez baitakigu nola interpretatu. Bestalde, *elloba* (3v) aldaera dugu. *OEH*k dakarrenez, *ei-*

*loba* Aezkoan erabiltzen da, eta *elloba* darabil Joakin Lizarragak. Gainerakoan, *erabaciten* (5v) aldaera dugu, *OEH*ren arabera Eguesibarren Izarbeibarren eta Oltzan erabiltzen da. Aipagarri dira *alcina* 'aitzina' (6v) eta *elleas* 'artilleaz' (6r) aldaerak, Lizarraga Elkanokoak ere baditu. Hegoaldeko goi-nafarreraz ohikoa den *iago* (*passim*) ere agertzen da, lehenagoko testuetan ez da halakorik. Nafarroako eremu horretakoa bide da *lengusia* 'lehengusina' (3v) aldaera ere. Ekialde zabalean agertzen den sudurkari gabeko *oraico* (2v) lekukotzen da sermoian. Amaitzeko, *importacio* 'inportantzia, garrantzia' (1v) dugu, *OEH*ren arabera lekukotasun bakarra.

Sermoiaren aurkezpenean aipatu dugunez, testua Zaraitzu ibarreko Otsagabian aurkitu bazen ere, hizkera aldetik ikusitako ezaugarriak direla eta, hego-ekialdeko goi-nafarrerazkoa dela pentsatzeko arrazoiak ditugu.

### 2.3.9. 1743ko Garizumako hirugarren igandeko sermoiak

Urte bereko bi sermoi dira jarraian dakartzagun bi lekukotasunak. Hain zuzen ere, 1743. urtean idatzi ziren bi sermoiok, eta garizumako hirugarren igandean irakurtzeko sortu ziren. Dena den, ez dakigu zein herritan irakurri ziren prediku labur hauek. Badakigu, ordea, Muruzabalgo bilduman agertu zirela. Satrustegik eman zituen ezagutzera (1987: 74-78) eta gaurko egunean Euskaltzaindiaren eskuetan daude, SAT 020-207 kodearekin.

Eduki aldetik, bietan bera da gaia, alegia, demonioak pertsonengan eragiten dituen gaitzak eta kalteak zein diren aipatu eta horiei nola aurre egin aholkatzen du predikariak. Letrakerak islatzen duenaren arabera, eskuizkribuon egilea ez da pertsona bakarra, baina hizkera aldetik eite berekoak dira. Lehen sermoiak lau orrialde ditu eta bigarrenak lau orrialde eta erdi.

Gure edizioa prestatzeko Euskaltzaindiaren artxiboan dagoen edizio digitalizatua erabili dugu, eta Satrustegirenarekin (S) erkatu dugu.

#### *2.3.9.1. 1. Testua*

<1r> [*Gurutzea*]

Domingo tercero de quaresma año 43.

*Erat Iesus eiiciens Demonium*[907] *et illud erat mutuum: Lucas cap. 11.*

Dio ebangelista sagratuac zegoala egungo egunean Christo[908] gure redentorea[909] demonio baten egozten guizon baten gorpuçetic. Eta da advertiçeco, eze dio «*erat*», erran nai baitu, zegoala espacios. Bada, nola dembora aniz vaiçen gorpuz artan zegoala, eguiñ[910] çen fuerte atera nai gave. *Et illud erat mutuum.* Eta çeducan demonioac mututuric guizon pobre ura. San[911] Matheoc dio isuturic ere zegola, eta aun emen eçiren paratu demonioac eguiñ[912]

[907] Demonium] esk. *de*. laburdurarekin.
[908] Christo] esk. *Xpto*.
[909] redentorea] *Redentarea* dator idatzirik.
[910] eguiñ] esk. *eguiñ* : S *eguin*.
[911] San] esk. *S$^n$*.
[912] eguiñ] esk. *eguiñ* : S *eguin*.

çizquion dañuac. Bada, Theofilatoc, San Chrisostomoc eta istorien maiestruec diote juntamente çegoala sorturic. Dañu obec guçiac causatu zituan demonioac[913] guizon onen gorpuçean, dembora aniçes berequi iduquiçearequi. Desdichatua, bada, becatorea, Jangoico gure jaunaren desgraçian dabillana, çeren bere becatuac dela medio, darabilla beti berequi demonioa,[914] eguiten diolaric aniz dañu, ala animan nola gorpuçean.

Nai zuelaric paçientissimo Jobec entendiçera eman becatoreari çer dañua eguiten duen animan demonioac[915] gorpuçean sarçera uzten dionean becatuaren medios, erraten ditu iz obec:[916] <1v> *Sicut tinea edificat domuum, et sicut custos umbraculuum*; au da, demonioac[917] eguiteco bere ichea eguiten duela pipiec edo ardançeetaco goardac vezala. Pipiac, bada, bere ichea eguiteco, lenic picaçen du zura varrendic eta doaie guitivana usteldus. Eta usteldu duenean egoten da espacio andiarequi bere ichean becala. O, pipi cruela! Bada, au berau eguiten du demonioac ichea eguiteco becatorearen animan. Lenic picaçen dizquio pensamentu onac eta Jangoicoaren[918] inspiraçioac[919] ere bai. Eta ia usteldu duenean, dago espacios bere ichean vecala. Bigarren comparaçioa,[920] Jobena, da ardançeetaco goardarena. Bada, onec eguiteco bere choza ebaquiçen du arbola, eta onen ramas estalçen du choza: *et sicut custos umbraculuum*. Modu onetan, vada, dio Jobec, eguiten du demonioac. Ostatua arçeco becatorearen animas, lenic ebaquiçen dio mieco arbola, deitu eztezon Jesus Christori[921] eta ez minza dadien gauza onic. Guero ebaquiçen dizquio ramac, beguietaco eta bearrietacoac, ecusi eztezan graçiaren arguitasunic eta ez aditu Jangoicoaren[922] izic. Eta guero au eguiñta,[923] dago demonioa[924] reposaçen sosegu andiarequi, bere iche propioan vecala becatorearen animan. Eta onengatic ecusten[925] <2r> da egun vecala biar ere restituçioa[926] eguiten dutela aniçec, egun vecala biar ere apartaçen[927] direla becatuco peligrotic. Eta onengatic aniçec eztute beñere confesio onic eguiten, çeren dauzquien demonioac[928] barrendic ustelduric. Eta nola baitaude Jangoicoaren[929] escuti uçiric, demonio oen vaitan dagonac regiçen eta governaçen ditu.

---

913 demonioac] esk. *Demo*$^{ac}$.
914 demonioa] esk. *demo*$^{a}$.
915 demonioac] esk. *demo*$^{ac}$.
916 obec] Azpian hurrengo orriko lehen hitzari erreferentzia egiten dion apeua dator.
917 demonioac] esk. *demo*$^{ac}$.
918 Jangoicoaren] esk. *Jang*$^{n}$.
919 inspiraçioac] esk. *inspiraçioac* : S *inspiracioac*.
920 comparaçioa] esk. *comparaçioa* : S *comparacioa*.
921 Christori] esk. *Xptori*.
922 Jangoicoaren] esk. *Jang*$^{n}$.
923 eguiñta] esk. *eguiñta* : S *eguinta*.
924 demonioa] esk. *demo*$^{a}$.
925 ecusten] Azpian hurrengo orriko lehen hitzari erreferentzia egiten dion apeua dator.
926 restituçioa] esk. *restituçioa* : S *restitucioa*.
927 apartaçen] esk. *apartaçen* : S *apartacen*.
928 demonioac] esk. *demo*$^{ac}$.
929 Jangoicoaren] esk. *jang*$^{n}$.

Ezta paraçen becatorea gaistoac becala Jangoicoa[930] ofendiçen duenean, bere buruari eguiten dizquion dañuequi, baizi becatu mortala eguiten duen oro, eguiten dio Jangoicoari[931] aimberçe injuria nola berris cruçificaçen balu eta berriro guençen balio viçiza. Eta onengatic dio San[932] Pauloc escribiçen çielaric ebreoei: «*Russus crucifigentes christum in semetisis*»; au da, bigarren aldian cruçificaçen dutela becatoreac Christo. Eta ala dio glosac: «*Per unumquodque pecatum, quod*[933] *comitimus christum crucifigimus, et quantum in nobis est occidimus*»; au da, becatu mortala eguiten dugun oro cruçificaçen dugula Christo[934] eta gueren aldetic guençen diogu Christori[935] viçiza, çerengatic Jangoicoac aborreçiçen du becatua eta becatoreac illçen du bere anima, apartaçen duelaric aren conpañiatic[936] <2v>. Eta, en fin, uzten duelaric Jangoicoa[937] eta escogiçen duelaric becatua, au eligiçen du bere Jangoicozat, San[938] Juanec dion vezala: *Qui facit pecatum servus est*[939] *pecati*; au da, becatu mortala eguiten duenac becatua[940] eligiçen duela bere Jangoicozat. Eta uzten duelaric Jangoico eguiascoa, eguiten da esclabo bere becatuarena, baita demonioarena. Origenesec eracusten duen vezala, *Unusquisque*[941] *quod*[942] *prae caeteris colit quod omnia venerat, et diligit, hoc ei Deus est.* Bacoizac ure dauquela bere Jangoicozat, çerere gueiago amaçen duen çerere gueiago estimaçen duen. Eta, ala, becatoreac uzten du Jangoicoa gauza guçien gañetic gueien amatu bear duena, gauza guçien gañetic gueien apreçiatu eta estimatu bear duena,[943] çeren den aren criadorea eta redentorea, eta ondasun eterno guçiec eman dechoquena. Eta becatoreac bere antojo çiquin vatengatic, deleite torpe batengatic, lagun progimoaren interesa[944] guiti vatengatic besarcaçen du becatua, eta arequi demonioa.[945] Considera vez, bada, bacoizac nola guelditucо[946] den becatorea bere Jangoicoric[947] gabe.
Exemº hist. 32.

---

930 Jangoicoa] esk. *jang*$^{a}$.
931 Jangoicoari] esk. *Jang*$^{ri}$.
932 San] esk. *S*$^{n}$.
933 quod] esk. *qd.*
934 Cristo] esk. *Xpto.*
935 Christori] esk. *Xptori.*
936 conpañiatic] Azpian apeua dator, hurrengo orrialdeko lehen hitzari erreferentzia eginez, kasu honetan *-pañiatic* dator, hitza zatiturik baitago.
937 Jangoicoa] esk. *Jang*$^{a}$.
938 San] esk. *S*$^{n}$.
939 est] esk. *ê.*
940 becatua] *-a* lerro artean gehitua.
941 unusquisque] aurretik bi hizki tatxaturik daude.
942 quod] esk. *qd.*
943 duena] <n> lerro artean gehitua.
944 interesa] *-sa* lerro artean.
945 demonioa] esk. *demo*$^{a}$.
946 geldico] esk. *geldicocoden* : S *geldicocoden.*
947 Jangoicoric] amaierako <c> lerro artean gehitua.

*2.3.9.2. Iruzkina*

Grafiaz den bezainbatez, afrikatuen eta frikarien arteko bereizketarik ez da egiten: *gorpuçetic*, *advertiçeco*, *aniz*, *gorpuz* (1r). Oro har, <z> erabiltzen du bizkarkarirako, baina *e* eta *i* bokalen aurretik <ç> agertzen da, eta inoiz edo behin <c>. Beharbada, *guitivana* (1v) eta *guiti* (2v) adibideetan herskari sabaikaria islatzen du <it> grafiak; hau da, *guttibana* eta *gutti* ulertu behar bide da.

Fonologiari dagozkionez, bokaletan *ee* bikoitza mantentzen da *ardançeetaco* (1v) adibidean. Horrezaz gain, aditzetan *e-*, *ecusi*, *ecusten* (1v) zaharra dago; *ichea* (*passim*) adibidean, aldiz, hasierako bokala itxi da sabaikariaren eraginez.

Kontsonanteen artean, hasperenik eza nabarmena da, besteak beste, *nai*, *artan*, *ura* (1r) adibideetan ikus dezakegunez. Halaber, sabaikaritzeak indarra duela dirudi: *eguiñ* (*passim*), *dabillana* (1r), *beñere* (2r), *gañetic* (2v). Baita herskari aurretik ere: *eguiñta* (1v) eta *illçen* (2r). Herskariez den bezainbatez, hasieran ahostuna dugu *guençen* (2r bi aldiz) adibidean. Bestalde, *-r(t)z-* kontsonante multzoa mantentzen da *aimberçe* (2r) adibidean dakusagunez.

Izen morfologiaz den bezainbatean, erakusleen artean *obec* (*passim*) dugu lehen graduan eta *ura* (1v) eta *ure* (2v) hirugarren graduan. Izenordainen genitiboetan, hirugarren pertsonako lehen graduan *oen* (2r) dugu eta pluraleko lehen pertsonan *gueren* (2r) pleonastikoa eta diptongorik gabea. Ergatibo pluralean *-ek* eta *-ak*, biak agertzen dira: *maiestruec diote* (1r), *pipiec* (1v) —aditza agerian egon ez arren, ergatibo plurala dirudi— eta *bigarren aldian cruçificaçen dutela becatoreac Christo* (2r). Instrumentalean sistematikoki *-s* aldaera apikaria dago: *medios*, *aniçes* (1r), *espacios*, *usteldus* (1v). Era berean, sistematikoa da soziatiboan *-reki*: *berequi* (*passim*), *iduquiçearequi* (1r), *andiarequi* (1v). Ablatiboa egiteko, oro har, *-tik* ageri da: *gorpuçetic* (1r), *peligrotic*, *aldetic*, *compañiatic* (2r). Hala ere, *escuti* (2v) lekukotzen da behin, baina hutsa izan daiteke. Adjektibo modura erabiltzen diren partizipioetan, ahoskabea dugu *eguiñta* (1v) adibidean.

Aditzei dagokienez, *izan* aditzaren iraganeko erroa *-e-* da: *vaiçen*, *eguiñ çen*, *eçiren* (1r). Aldiz, **edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da: *dugun*, *dugula* (2r). *Joan* aditzaren singularreko *doaie* (1v) aldaera nafarra lekukotzen da, behin bada ere. Halaber, *eduki*-ren adizkietan *-d-* mantentzen da: *çeducan* (1r). Bestalde, aditz horren plurala egiteko, *-zki* atzizkia erabiltzen da, ia Nafarroa osoan ohi den bezala: *dauzquien* (2r). Iraganeko adizkietan *-n* mantentzen da: *cizquion* (1r).

NOR-NORI-NORK sailean *-i(n)-* erroa erabiltzen da: *eguiñ cizquion* (1r), *ebaquiçen dizquio* (1v). Adibide horretan ikus daitekeenez, absolutiboari dagokion pluralgilea *-zki-* da, eta sail horretan *-te* da hirugarren pertsonako ergatiboari dagokion pluralgilea: *diote* (1r). Bestalde, sail horretan bertan, indikatibotik landa, **ezan* erabiltzen da: *eztezon* (1v) singularrean eta *dechoquena* 'diezazkiokeena' (2v) pluralean, *-itz-* > *-etx-* bilakaturik. Indikatibokoak ez diren perifrasietan aditzoinaren eta partizipioaren arteko lehia dago: *deitu eztezon*, *ecusi eztezan* (1v), baina *minza dadien* (1v), *considera vez* (2v). Azken adibide horrek erakusten duenez, **ezan* aditzaren aginterazkoetan bukaerako bokala galtzen da.

Datibo komunztadura ez da nahitaezkoa ondoko adibideak erakusten duenez: *Nai zuelaric paçientissimo Jobec entendiçera eman becatoreari çer dañua eguiten duen animan demonioac gorpuçean sarçera uzten dionean becatuaren medios* (1r). Adibide

horretan *dionean* aditz laguntzaileak datibo komunztadura du, baina *duen* adizkian ez da halakorik, bietan zilegi izan arren.

Sintaxi aldetik TO-GEN deitzen zaion egitura agertzen da: *demonio baten egozten* (1r). Bestalde, *utzi* aditzaren osagarria adlatiboan ematen da aditz-izena: *gorpuçean sarçera uzten dionean* (1r). Horretaz landa, konpletibotan *-ala* eta *-ela* daude: *zegoala* (1r bi aldiz), *çegoala* (1r) baina *zegola* (1r) *dela* (1r) *direla* (2r). Moduzko perpausetan *-elarik* erabiltzen da: *eguiten diolaric*, *nai zuelaric* (1r), *escribiçen çielaric* (2r). Bestalde, [zenbat eta -ago, orduan eta -ago] egituraren pareko den beste egitura bat dugu: *çerere gueiago amaçen duen çerere gueiago estimaçen duen* (2v). Amaitzeko, kausazkoetan *zeren […] en* erabiltzen da: *çeren dauzquien* (2r), *çeren den aren criadorea*, baina *çerengatic Jangoicoac aborreçiçen du becatua* (2r) ere badago.

Lexiko eta aldaerekin amaitzeko, aipagarri dira goi-nafarreraz ohikoak diren ondokoak: *erran* (1r), *ichea* (*passim*); *OEH*aren arabera (cf. s.v. *etxe*), aldaera hori, besteak beste, Nafarroan ageri da: Bortzirietan, Ultzaman, Arakilen, Oltzan eta Gulibarren. Bestalde, *vecala* (*passim*), baina v*ezala* (*passim*), *bearrietacoac* (1v), *guençen* 'kentzen' (2r bi aldiz) ditugu. *OEH*ren arabera (cf. s.v. *kendu*), *gendu* hegoaldeko goi-nafarreran eta Zaraitzuko hizkeretan erabiltzen den aldaera da. Horrez gain, *sorturic* dugu 'gorturik' adierarekin. Gainera, *zarra* (1v) agertzen da, sabaikari gabe, 'txar' adierarekin: *costumbre zarra becatuan egoteco* (1v).

Hizkera aldetik nongoa den zehazten zaila da. Soziatiboko *-reki* aldaerak goi-nafarreraren hegoaldera begira jartzen gaituen arren, daukagun iraganeko adizki bakarrean akabuko *-n* mantentzen da; halere, gogoan izan behar dugu galtze hori ez dela sistematikoki gertatzen beti. Dena dela, Nafarroako iparraldeko mintzora garamatza *dechoquena* adizkiak. Beraz, ezin aho batez esan nongo testua den, baina Iruñetik iparraldera eta Bortziriak-Baztan-Malerreka-Bertizaranatik hegoalderakoa izan daitekeela dirudi.

Iruzkinarekin amaitzeko eta testuaren ulermena errazte aldera, sermoian agertzen diren pertsonak zein diren azalduko dugu laburki: Theofilato VII. mende hasieran bizi izan zen historialari bizantziarra da. San Chrisostomo K.o 347-307 urte bitartean bizi izan zen, Konstantinoplako gotzain izan zen eta ekialdeko Elizako aitatzat hartzen da. Job Itun Zaharreko Joben liburuko pertsonaia nagusia da, eta deabruak tentatu zuen. Azkenik, Origenes K.o 185-254 urte inguruetan bizi izan zen, eta Elizaren aitetako bat da.

### *2.3.9.3. 2. Testua*

<1r> Dominica[948] 3ª quaresma,[949] año 1743

*Erat Iesus eiciens demonium, et illud erat mutuum. Luccas.*[950] *Cap. 11.*

Aiñ propioa da Jangoicoaren[951] baitan[952] ondasunac guizonari ematea nola eguzquiari bere raioc eta arguitasunac repartizea illuntasunac guenceco, ce-

[948] Dominica] esk. *dom^a^*.
[949] quaresma] esk. *qua^e^*.
[950] Luccas] esk. *Lucc.*
[951] Jangoicoaren] esk. *Jang^n^*.
[952] baitan] esk. *baitan* : Sk ez dakar.

rengatic etorri zen Christo[953] mundura demonioaren[954] obrac deseguitera. *In hoc aparuit filius dei, ut disolvat opera diaboli*. Etorri zen gu demonioaren[955] esclabitudetic liberaçera, destruicera vizioac eta ezarzcera virtuteac. Zegoan Jesus demonioaren egozten guizon miserable baten gorpuzetic. *Erat Iesus eiciens demonium*. Cegoan espacio andiarequi, baña nola date au? Ezuen Dabidec erran eldu zela jaun au apresuraturic gure erremediora? *Exultabit ut gigas ad currendam viam*. Nola, bada, orai onen espacios? Acaso resisti dezoque demonioac[956] Jangoicoaren[957] podoreari? Ez, baizi detenizen da ezagu dezan guizonac cein efecto gaistoac causazen dituen animan entregazen zaionean bat becatuarequi demonioari. *Permitit diabulo haec facere exterius, ut significaret ea, que facit interius*.

Dauca demonioac guizon au isuturic, sorturic eta mututuric. Isuturic icusi eztezan bere estadu miserablea eta negarric eguin eztezan bere becatues. Sorturic adi eztezan Jangoicoaren[958] iza eta bere salbazioco combeni zaiona. Mututuric aguer eztechan bere llagac eta confesa eztechan bere becatuac. Resistizen da fuertequi demonioa[959] ez uzteco guizon miserable onetan daucan posesioa. Ezta, bada, chiquiagua resistenzia eguiten duena ez uzteco animan duen posesio, becatorea bere borondatera entregacen zaionean. Detenitu zen Christo[960] <1v> espacios demonio onen egozten, *erat Iesus eiciens demonium*,[961] significazeco cein dificultade andia den liberazea guizon bat constumbre zarretic, ceren alegazen du posesio ez uzteco aimberze demboras culparequi poseitu duen anima. *Diabolus dificilius dimitit, quos diutius posidet, alegat enim contra eos prescriptionem*.

O, catholicoac![962] Cer eguia au? Berzela erran zadazute, cer da motibo edo cause anizec eztezaten uzi juramentuac eguiteco eta maldizizeco costumbre[963] gaistoa, etc.? Eta cer izan da causa becatorea vizi dadien urte anizes eta bear bada vizi gucien estadu gaistoan becatutic apartatu gabe? Da acaso cerengatic falta diren norc conseju onac eman? Ez por cierto. Eze, Jangoicoari[964] graciac, badira munduan persona onac, losincharic gabe eguiac erraten dituztenac. Edo da cerengatic Jangoicoac[965] açenduric[966] dauzquien eta eztioten asistizen bere ausilioequi? Guitiago, cerengatic Jaun Soberano au beti dago

---

953 Christo] esk. *Xpto*.
954 demonioaren] esk. *demo*$^{n}$.
955 demonioaren] esk. *demo*$^{n}$.
956 Demonioac] esk. *demo*$^{c}$.
957 Jangoicoaren] esk. *Jang*$^{n}$.
958 Jangoicoaren] esk. *Jang*$^{n}$.
959 Demonioa] esk. *demon*$^{a}$.
960 Christo] esk. *Xpto.*
961 demonium] esk. *demo*$^{n}$.
962 Catholicoac] esk. *Cathl*$^{c}$.
963 Costumbre] Amaierako bi hizki tatxatuta daude hitz honetan; bata hitz amaierako <e> da, bestea ez da ikusten baina <a> izan liteke.
964 Jangoicoari] esk. *Jang*$^{i}$.
965 Jangoicoac] esk. *Jang*$^{c}$.
966 açenduric] esk. *açenduric* : S *acenduric*.

abisoen[967] ematen vioçera[968] eta inspiraçioa[969] animara, verac dion vezala: «*Sto ad hostium et*[970] *pulso*». Eta baldin vadira munduan conseju[971] onac ematen chuztenac, eta Jangoicoac[972] bere ausilioequi[973] asistizen badu, cer izanen da cause onemberze becatore daudan culpan, beñere emendatu gabe? Motiboa da dudaric gabe becatoreac izatea costumbre zarra becatuan egoteco eta demonioa[974] resisticen da fuertequi ez uzteco anima aimberze demboras poseitu duena.

Afligituric guizon bat allegatu çen Christogana[975] seme endemoniatu batequi eta erran zion: «Jauna, eraman dut nere seme au orren dicipuluetara conjura dezoten. <2r> Conjuratu diote, baña banoan, cerengatic ezta atera demonioa[976] eta dago ain[977] fuerte nola len». Galdetu çion[978] orduan Christoc:[979] «Cembat dembora da horrela dagola? *Quantum temporis est*[980] *exquo ei hoc accidit?*» Responditu çion[981] Aitac: «Jauna, chiquia den esqueros. *Ab infançia*». Acaso ezta Christo[982] sabiduria infinitoa? Bai. Acaso[983] ezequien çembat[984] dembora çen guizon ura endemoniaturic çegola?[985] Baitare. Certaco, bada, galdeçen[986] dio? Ezagu çedien[987] cein dificultade andia izandu zuten apostoluec, guizon ura libraçeco[988] eta ezagu zedien Christoren[989] virtutea. *Ut diuturnitas infirmitatis ostensa, curationem faciat.* Baldin bazen demonio bat aimberze urtes posesioan zegona, çer[990] duda da dificultosoa[991] izan çedien[992] egoztea? En fin, egozi zuen Christoc,[993] baña adi zazute cer suceditu çen.

---

967 abisoen] esk. *abisioen* : S *abisioen*.
968 vioçera] esk. *vioçera* : S *viocera*.
969 inspiraçioa] esk. *inspiraçioa* : S *inspiracioa*.
970 et] esk. *et* : S *es*.
971 Conseju] esk. *consuju* : S *consuju*.
972 Jangoicoac] esk. *Jang$^{c}$*.
973 Ausilioequi] <e> lerro artean.
974 Demonioa] esk. *demo$^{a}$*.
975 Christogana] esk. *Xptogana.*
976 Demonioa] esk. *demo$^{a}$*.
977 ain] esk. *ain* : S *aiñ*.
978 çion] esk. *çion* : S *cion*.
979 Christoc] esk. *xptoc.*
980 Est] esk. *ê.*
981 çion] esk. *çion* : S *cion.*
982 Christo] esk. *xpto*.
983 acaso] esk. *acaso* : S *acoso*
984 çembat] esk. *çembat* : S *cembat*.
985 çegola] esk. *çegola* : S *cegola*.
986 galdeçen] esk. *galdeçen* : S *galdecen*.
987 çedien] esk. *çedien* : S *çedien*.
988 libraçeco] esk. *libraçeco* : S *libraceco*.
989 Christoren] esk. *xptoren*.
990 çer] esk *çer* : S *cer*.
991 dificultosoa] <-*a*> lerro artean.
992 çedien] esk. *çedien* : S *çedien.*
993 Christoc] esk. *xptoc.*

Apenas guizona libratu zen demonioaren[994] esclabitudetic, erori zen lurrera illa vezala. *Factus est*[995] *sicut mortuus*. Eta aimberze eze presentean zeuden guciec juicio eguin zuten ill zela. *Ita ut multi crederent, quia*[996] *mortus est.*[997] Considerazen badugu guizon au, demonioarequi[998] dagonean aiñ baliente eze anizen ertean eziñ sugetatu baizuten, orai libre dagonean guespede gaisto onetatic, nola dago onen flaco eze erorzen baita illa becala? Cer da au? Cer bear du? Cen demonio bat aiñ zarra posesioan eze guçia[999] çirudien[1000] anima viziza ematen ziona, ez espiritua poseiçen[1001] zuena. *Factus est*[1002] *sicut mortuus*. Nola zaude, bada, becatorea aiñ espacio andiarequi culpan zere borondatera demonioaren[1003] esclabo eguiñic[1004] <2v> añadizen dituzularic culpac culpen gañean eta becatuec becatuen gañean, beñere uzi gabe costumbre gaistoac siñestazen diozularic demonioari,[1005] guero izanen dela erraz orai aiñ dificultoso derizozuna? Naizu ecusi? Adi zazu, bada.

Dio San[1006] Geronimoc[1007] aditu zuela San[1008] Arsenioc aingueru baten oiua, ceñetan erraten çion:[1009] «*Egredere et ostendam opera heorum*. Ateradi, sandua, ere celdatic». Erran zion aingueruac «Eze nai diat eracusi cer eguiten duten guizonac munduan». Atera çen[1010] Arsenio eta ecusi zuen guizon bat egur ebaquizen ari zela. Eguin zuen zama bat, lotu zuen eta probatu zuen ea soñera zezaquen eta ezin iragan zuen. Abiatu zen berris egur eguiten eta eguin zuen zama[1011] aundiago bat, probatu zuen ea soñera zezaquean, baña[1012] orduen guitiago len baño eta, ala ere, proseguizen zuen gueiago egur eguiten. Orduan erran zion aingueruac San[1013] Arseniori: «Ecusten duc cer eguiten duen, tonto arc? Bada, au berau eguiten ditec becatoreac. Eziñ garaitu ditec urte bateco costumbre gaistoac eta proseguizen ditec urte aniçes,[1014] ustes guero errazago[1015] izanen den Jangoicoagana combertizea eta penitenzia eguitea».

---

994 demonioaren] esk. *demo*$^{n}$.
995 est] esk. *ê*.
996 quia] esk. *qa*.
997 est] esk. *ê*.
998 demonioarequi] esk. *demo*$^{qui}$. : S *demonioqui*.
999 guçia] esk. *guçia* : S *gucia*.
1000 çirudien] esk. *çirudien* : S *cirudien*.
1001 poseiçen] esk. *poseiçen* : S *poseíen*.
1002 Est] esk. *ê*.
1003 Demonioaren] esk. *demo*$^{n}$.
1004 eguiñic] azpian *-ñic* dator zerrenda bezala.
1005 demonioari] esk. *demo*$^{i}$.
1006 San] esk. *S*$^{n}$.
1007 Geronimoc] esk. *Geroni*$^{c}$.
1008 San] esk. *S*$^{n}$.
1009 çion] esk. *çion* : S *cion*.
1010 çen] esk. *çen* : S *cen*.
1011 zama] *zama bat* idatzi zuen lehenik, ondoren *bat* tatxaturik dago.
1012 baña] esk. *bana*.
1013 San] esk. *S*$^{n}$.
1014 aniçes] esk. *aniçes* : S *anices*.
1015 errazago] esk. *erazago :* S *erazago*.

Erran zadazu, becatore miserablea, ezta eguia orai senti duzula dificultade andia, cere costumbre gaistoac uzteco? Bada, norc erran dizu costumbrea[1016] zarragoa eguinta, errazago izanen dela? Orai ezin atera baduzu zañetatic arbola gazte bat, norc[1017] erran dizu arbola onec zañac barrenago egozten dituenean, obequi ateraco duzula? Eta, vada, catholicoa,[1018] prebeni zaitea confesio on[1019] <3r> baten medios, destruituric gueldi dadien essai gaistoa. Bada, contu eguin zazu zembat costea zauden Jaun Soberano oni. Eztuquezula nai berris cruzificatu zuregatic vere odol preziosoa eman zuen Jaun Soberano au. Comberti bedi zure vioz gogor ori. Eztadiela izan arri guziac baño gogorrago, orrequin consegui zazun grazia, prenda seguroa gloriaco. *Ad quam.*

### *2.3.9.4. Iruzkina*

Sermoi honetan ikus daitekeenez, grafian, oro har, ez da txistukari afrikatua frikaritik bereizten. Nolanahi ere, *ezarzcera* (1r) eta *essai* (3r) ditugu, grafikoki afrikatua dutelarik. Bestalde, <ç> erabiltzen da bizkarkaria islatzeko *e* eta *i* bokalekin bakarrik, baina testuinguru berean <c> eta <z> ere agertzen dira: *zen* (1r), *cein*, *cerengatic* (1v) *guziac* (3r). Ematen duenez, <it> grafiak bustidura adieraz lezake *guitiago* 'guttiago' (2v) adibidean.

Fonologiari dagozkionez, sabaikaritzea aski indartsua da: *aiñ* (*passim*), *baña* (*passim*), *beñere* (1v, 2v), *eziñ* (2r, 2v), *zañetatic* (2v). Kontsonante multzoetan *-r(t)z-* mantentzen da: *aimberze* (*passim*), *berzela*, *onemberze* (1v). Bestalde, *ecusi* (2v) forma zaharra daukagu. Azkenik, *we-* goranzko diptongoz hasten diren maileguetan *g-* gehitzen da: *guespede* (2r).

Izen morfologiaz den bezainbatean, izenordain posesiboetan *eu* > *e* gertatu denez, *nere* (1v), *zere* (1v), *cere* 'zeure' (2v) eta *ere* 'heure' (2v) gisako posesiboak ditugu. Kasu marken artean, nabarmentzekoa da ergatibo pluralean dugun polimorfismoa, *-ak* eta *-ek* agertzen baitira: *guciec juicio eguin zuten ill zela* (2r), *au berau eguiten ditec becatoreac* (2v). Bizidunen inesiboaren adibide bakarra dugu, eta bertan ekialde zabalekoa den *baitan* berrikuntza agertzen da: *Jangoicoaren baitan* (1r). Soziatiboaren marka *-reki* da sistematikoki: *becatuarequi* (1r), *culparequi* (1v), *andiarequi* (2r). Instrumentaleko morfema, sistematikoki, aldaera apikaria da*: becatues* (1r), *demboras* (1v), *medios* (3r). Adjektibo modura erabiltzen diren partizipioetan, ahoskabea dugu *eguinta* (2v) adibidean.

Aditzei dagokienez, arkaismo gisa subjuntibo trinkoa agertzen da: *Cer izanen da cause onemberze becatore daudan culpan* 'Zer izanen da kausa honenbertze bekatari egon daitezen erruan' (1v). Halaber, ahalerazko trinkoa lekukotzen da: *Nola date au?* (1r). Perifrasietan, aldiz, geroaldia egiteko *-en* morfema erabiltzen da baldin eta partizipioa *-n-*z bukatzen bada: *izanen* (*passim*). Aditz laguntzaileei dagokienez, *izan* aditzaren iraganeko erroa *-e-* da, *etorri zen* (1r), eta **edun* aditzaren orainaldikoa *-u-*: *dut* (1v), *badugu* (2r). Iraganeko adizkietan *-n* ez da behin ere galtzen: *etorri zen*,

1016 costumbrea] <a> lerro artean.
1017 norc] esk. *noc*.
1018 Catholicoa] esk. *catho*[a].
1019 on] azpian apeu gisa *bat* dator.

*ezuen* (1r). NOR-NORK saileko pluraleko adizkietan sinkopa gertatu da: *ematen chuztenac* (1v), asimilaziozko sabaikaritzearekin. Bestalde, subjuntiboan *-itz-* > *-etx-* egin da: *aguer eztechan*, *confesa eztechan* (1r). Indikatibokoak ez diren perifrasietan, aditzoina erabiltzen da *-tu*-z amaitutako aditzekin; aitzitik, partizipioa erabiltzen da *-i*-z bukatzen diren aditzetan*: resisti dezoque*, *ezagu dezan*, *adi eztezan*, *aguer eztechan* (1r), *soñera zezaquen* (2v) eta *icusi eztezan* (1r), *eztezaten uzi* (1v). NOR-NORI-NORK sailean **ezan* erabiltzen da: *dezoque* 'diezaioke' (1r), *dezoten* 'diezaioten' (1v). Aginteran aferesidun adizkiak ditugu: *erran zadazute* (1v), *erran zadazu* (2v). Aditz laguntzaileetan, pluralgile gisa *-te* aldaera agertzen da NOR-NORI-NORK sailean datiboa pluraleko hirugarren pertsona denean; aldiz, NOR-NORK sailean ergatiboko bigarren eta hirugarren pertsona denean erabiltzen da *-te*: *eztioten asistizen* (1v), *adi zazute*, *eguin zuten* (2r), *eguiten duten* (2v). Dena den, trinkoetan *-e* dugu, behin bada ere: *dauzquien* 'dauzkaten' (1v). NOR saileko aginterazko perifrasian *izan* da laguntzailea, eta bigarren pertsonan *zaitea* (2v) ageri da.

Sintaxiari dagokionez, perpaus osagarrietan *zela* (*passim*), *den* (*passim*) eta *diren* (1v) ditugu. Erlatiboetan hurrenkera hau dugu: *anima viziza ematen ziona* (2r). TO-GEN egiturari dagokionez, ez da sistematikoa: *obrac deseguitera* (1r), e*torri zen gu demonioaren esclabitudetic liberaçera*, *destruicera vizioac eta ezarzcera virtuteac* (1r), baina *zegoan Jesus demonioaren egozten* (1r), *demonio onen egozten*, *abisoen ematen*. (1v).

Lexiko aldetik nabarmentzekoak dirateke ondoko hitz eta aldaera hauek: *guenceco erran*, *sorturic* 'gorturik', *podoreari* (1r), *açenduric*, *guitiago* (1v), *ertean* (2r), *orai* (*passim*), *becala* (2r), *siñestatu*, *sandua*, *aundiago* (2v). Bestalde, *zarra* (1v) agertu arren, esanahia 'txarra' dela: *significazeco cein dificultade andia den liberazea guizon bat constumbre zarretic*, *izatea costumbre zarra becatuan* (1v), *Cen demonio bat aiñ zarra posesioan* (2r).

Izarbeibargo Muruzabal herrian aurkitutako testuak izan arren, iparralderagoko herri batekoa dela ez dago zalantza handirik. Goi-nafarrerari dagokion ezaugarri nabarmena da, besteak beste, instrumentaleko *-s*. Halere, esan bezala, ez dirudi hegoaldeko goi-nafarrerazkoa denik, hizkera honetan ohikoa den iraganeko *-n*-aren galerarik ez baita ageri sermoian. Gainera, goi-nafarrerazko erdialdeko eta iparraldeko hizkera askotan ohikoa den *e*zan*-en adizki pluraletan izandako **-itz-* > *-etx-* bilakabidearen bi adibide daude.

### 2.3.10. Obanosko bertsoak c. 1744

Dirudienez, euskaraz idatzitako bertso hauek latinez idatzitako Elizaren historia laburtua kontatzen duen eta larruzko estalkiz apainduta dagoen eskuizkribu batean daude jasorik (Ondarra 1993a: 534). Ondarrak berak (1993a) eman zituen ezagutzera, baina ez zuen zehaztu non dagoen jatorrizkoa; dena den, dioenez, beharbada Salamancan egon daiteke.

Ez dakigu eskuizkribua noiz idatzi zen. Hala ere, Ondarrak (1993a: 534-535) dioenez, paperaren ur-markan 1743 jartzen du, eta 1744an bukatzen da liburuan kontatzen den Elizaren historia. Gainera, eskuizkribuan esaten denez, Gaspar Miranda eta Argaiz zen Iruñeko gotzaina, eta bera 1743-1767 izan zen karguan. Beraz, *ante quem* data 1767 da, baina ur-marka eta historiaren amaiera data kontuan izanda, 1744. urte ingurukoa izan daitekeela dirudi. Egilea nor izan zen ere ez da ezagutzen.

Hala ere, Obanostik datorren eskuizkribua denez, Ondarrak iradokitzen du Juan Undiano (1551-1633) izan litekeela bertso horien egilea.

> Ez dakigu nork eta non izan den idatzia, baina suposatzen dugu herri hartako parrokia edo baseliza famaturen bat S. Nikolasi eskainia zegoela, honen himnoa euskaraz eta latinez baitakar. Nafarroako herri hauetan ditugu S. Nikolasen parrokiak; *Arteaga*-n (*Estellerrian*), *Auritz* (*Erroibar*), *Enderitz* (*Olaibar*), *Iruñea*, eta *Larrasoañan* (*Esteribarren*). Bestalde, kodizea, dakigunez, *Izarbeibarreko Obanos*-etik dator, eta ibar horretan S. Nikolasen bi baseliza ditugu, bat *Tirapu*-n eta bestea *Uterga*-n, bigarren hau *Olandain* herri desagertuaren parrokia eliza izan zelarik. Egia esan, gure buruan *Uterga* eta *Iruñeko* elizak ari dira lanean. *Uterga*-koa nagusituko balitz, ez ote luke izango zer ikustekorik *Obanos*-en dagoen *Arnotegi*-ko (lehen Arnautegi) baselizaren ermitazain izan zen eta euskal bertsoak erruz tajutu zituen Juan de Undianok (1551/2-1633)? (1993a: 535).

Egile proposamena ontzat hartuta ere, bertsoen kopia modernoa da, bertako hizkerak dituen ezaugarriek XVIII. mendearen erdialdekoa dela pentsatzeko arrazoiak ematen baitituzte.

### *2.3.10.1. Testua*

<290> **Missiora deeya**

Missionera zato,
guciac utciric,
etzaitela gueldi,
ahi!, burlaturic.

Fite, fite, zato!
Missioa adi zazu,
ocasioa utzazu,
lance au ez galdu.
Orra, avisaturic,
etzaitela gueldi,
ahi!, burlaturic.

Ceruco zarade
biderantea.
Uss eguiñ etzazun
ango bidea,
zato doctriñara
humillaturic.
Etzaitela &.

Ceruco ondasunac
nai tuzu erdechi?
Infernuetatic
eguiñ igasi?
vicioac uzquizu
urriquituric.
Etzaitela &.

Nola den vicia,
arla da ilcea.
<291> Vici onac ona du
eriotcea.
Au nola icenen den
atra emendic.
Etzaitela &

Nai duzu gozatu
Mariarequiñ?
etzaitela josta
munduarequiñ,
utcico zaitu onec
engañaturic. &

Culpac erituric
barimazauzqui,
confessoreagana
lasterca zoaci.
Utcico zaitu arrec
zu sendaturic. &

Examiña zazu
conciencia ongui,
beira ceure falta
ez batre utci,
espacio ar zazu
retiraturic. &

Zuc daquizu, bada,
contuac atratcen.
Onec gutiago
eztu importatcen,
ongui seculaco
edo galduric. &

Precisso bear dena
urriquimentua.
Au ezparimada,
gucia galdua.
Zato siñes, otoy,
damu arturic. &

Jesus gurutcean
dago nigatic.
Nola, viotz nerea,
zaude ossoric?
Etzara gelditcen
bi zati eguiñic? &

Ez utci errateco
batre mortalic,
asqui da herida bat
uzteco illic.
Erranzquizu claro
explicaturic. &

Bear duzu ere izan
propositua
berris ez erorceco
siñes artua,
<292> igas eguiteco
ocasioetatic. &

Erioa dator
uste eztenean
ladrona bezala
goarcabean.
Etzaudela bada
descuidaturic. &

Ellegatuco da,
eztaquizu noiz.
Egun ala biar,
berant ala goiz,
edo zartu gave,
edo zarturic. &

Ezta cer fiatu
adiñ onean,
badoazi gazteac
zarren aurrean.
Argatic dago aniz
condenaturic. &

Arrassean aniz
ongui etziten,
goiceco difunto
banago icusten.
Gaztea baduzu
asqui avisoric. &

Jesus erran gabe,
aniz bezala,
zu ere ill zaitezque
nornai zarela.
Eztuzu gueyago
privilegioric. &.

Pensatu bear duzu
Arrassaldean
vicico etzarela
biar goicean.
Jaiqui[1020] zaite, alaber,
arrepentituric. &

Desseya zaquezun
lance obrenean
erorico zara
noizpat goatcean,
indarrica gabe
consumituric. &

Leneco dembora,
ahi!, cer eguin da?
Nola urbillcen den
azquen despeida!
suspiros, dolores,
ayes beteric. &.

[1020] Jaiqui] Dirudienez, eskuizkribuan *jaite* dator, eta Ondarrak halaxe dio: «Espero dena '*jaiqui*' da.» Beharbada, ondoko *zaite*k eragin du *jaiqui* → *jaite* aldaketa.

<293> Daude turbaturic
vorz sentidoac,
o cer eguin ciren
nere gustoac!
Daude ya guciac
acabaturic. &.

Eldu da ya guero
oliadura,
aditcen bularren
zurruca gura,
echeco guztiac
choil doluturic. &.

Emanen dizute
Santo Christoa,
baitare candela
bedeicatua.
Ahi, eguiñ ezpanu
nic becaturic. &

Ill eta bereala
juicioa,
trance terriblea,
espantosoa,
pensatceac berac
nauca arrituric. &

Contu escatuco da
itz ociosoes.
Ahi, cer izanen da
berce anitz itces?
Chanzac deicen tuzu
gaizqui deituric. &

Nai duenac orduan
ongui libratu,
dembora denean
ez descuidatu.
Zaude, otoy, zaude
prevenituric. &

Jangoicoa dela
piadosoa
eguia da, baña
ain da justoa
ez egon vanoqui[1021]
confiaturic. &

Ezta orai ordua
regalatceco.
Ezta orai dembora
placer arceco,
nai duenac nai duena
erranagatic. &

Vicia da labur,
<294> segur ilcea.
Gustoa da guti,
pena lutcea.
Noiz artraño, bada,
zaude issuturic? &.

Nor obec aituric
ezta emmendatcen,
juicio duela
eztut pensatcen.
Diot berriz ere:
eztu juicioric.
Etzaitela gueldi,
ahi!, burlaturic.

[1021] vanoqui] antza denez, eskuizkribuan *vanoquiñ* jartzen du, baina hutsa dirudi. Ondarrak halaxe dio: «Espero dena ‘vano*qui*’ da».

**Missioraco saetac**

Oyus dago Jaincoa,
eztuzu nai aditu?
Guero adituco etzaitu.

Orai deitcen zaituena
zure aita bera da.
Guero juez izanen da.

Jaincoagana itzuli
ezpaduzu nai orai,
zuc nai duzunean, ahi!

Izanen da Jesusen
odol sandu issuria,
ahi! zure galgarria.

Emmendatu bear bauzu,
becatorea, noizpai,
cerengatic ez orai?

Dembora emen galdua
guero zure damua.

Jaincoaren partes diot:
bear duzu confessatu,
bercela condenatu.

Otoi confessa zaite.
Ill zaitezque ez ustean,
becatu mortalean.

Aniz, confessatcea
biarco utciagatic,
daude condenaturic.

Confessioan mortal bat
alques utci baduzu,
batre barcatu etzaizu.

Alque zaite eguiteco,
<295> baña ez confessatceo.

Confessatu denari
urriquimentu gave,
barcatu etzayo batre.

Orai bear da dolua,
guerocoa da galdua.

Confessioan ezpada
ocasioa despeitu,
deus ere balio eztu.

Jaincoa zuregatic
ainberce padecitcen,
eta zu ofenditcen?

Jesus dago zugatic
gurutcean itzaturic.

Berriz ofenditcea
da berriz itzatcea.

Nola atrevitcen zara
becatuan locarcera?

Bada aniz infernuan
becatu soill batequiñ.
Nola zaude ainbercequiñ?

Zuc baño gutiagoequiñ
dago aniz demoniequiñ.

Otoy, iritzar zaite
fite becatorea,
urbill da eriotcea.

Orai preveni zaite,
orduco utci gave.

Anitz banago icusten
goicean ongui jaiquiric,
arrassaldeco illic.
Franco banago aditcen
arrassean ongui etziñic,
biramon goiceco illic.

Zaude prevenituric
ezta ordu seguroric.

Ongui orai bazaudere
derrepente ill zaitezque.

Il bear duzu bein sollic,
eta uss orducoa
da uss seculacoa.

<296> Juicioaren uste zara,
eta etzara emmendatcen?
Cer oteuzu pensatcen?

Orai da Jangoicoa
choill urricariosoa,
baña an rigurosoa.

O, cein gauza bortitza
Juez Jaunaren vista!

Plazara atraco dire
orduan ugariac
zure culpa gutziac.

Orduco sentenciatic
batre ezta apelacioric.

Orduan egotea
zure contra, Maria,
gauza icaragarria!

Infernuan cer ote da?
Tormentu beticoa,
pena seculacoa.

Gau batez eztaiteque
sufritu dolorea,
nola fiñic gavea?

Condenatuec orai
cer emanen lukete[1022]
zure escaya balute?

«O, nola salvatcea
egon cen nere escuan!»
erranen duzu orduan.

Bearco duzu errabiatcen
egon secularean
demonioen ertean.

Pena bete betean,
beti beti irautea,
zoriaren tristea!

Juramentuarequi
desgracia dabil beti.

Gauza chiquian badare,
guezurrarequiñ bada,
becatu mortalea da.

Lurrarequiñ cerua
bere contra[1023] tu exaiac
juramentu eguilleac.

Guertatuco zaizuna
maldicio eguillea
<297> eriotce repentea.

Jaincoac barcatuco
eztio essaiari,
barcatcen eztionari.

Nola nai du salvatu
nai eztuenac barcatu?

Adisquide eguinda
Jangoico berarequiñ,
bere exayarequiñ
baqueac eguin tuena.

Etorrico da fite
zugana castigoa,
guizon deshonestoa.

Araguiaren gustotic
infernuco penara
pausua choill prompto da.

Noiz gusto liquixaren
obrenean daudelaric
guelditu da anitz illic.

Urbildus doaquizu, bai,
ola luxuriosoa,
ceure azquen plazoa.

Nai baduzu ez eguiñ
lujuriazco culparic,
apart ocasioetaric.

Ill artraño ez echiden,
restitui len baño len.

Jabeari berea
bearco diozu itzuli,
confessatcecotz ongui.

1022 lukete] Badirudi eskuizkribuan *lukte* datorrela, baina hutsa dirudi, Ondarrak ohartarazten duenez «Silaba bat falta da lerroan, beraz ***lukete*** izan behar luke».

1023 contra] Ondarrak dioenez, eskuizkribuan *conta* jartzen du.

Murmurazalearen
izanen da pagua,
beti betico sua.

Ceure faltac icusi,
eta bercenac utci.

Nai tuenac seculaco
gozatu contentuac
guarda mandamentuac.

**Christo crucificatuari**

Bada, izan da nigatic
zure eriotcea,
dela possible, Jesus,
<298> berriz zu ofenditcea.

Bein saldu Judas batec
bazaitu neregatic,
anitz aldiz guerostic
saldu zaitut neuronec.
Cer pena didan onec.
Ahi, Jesus, choill dulcea!
Dela possible, Jesus,
berriz zu ofenditcea!

Zure aurtegui sandua
dago listus beteric,
orduan arrituric
nola cegon cerua!
Cer ai zara mundua?
Noizco da humillatcea?
Dela possible &.

Pillareari loturic
zarade azotatua,
gucia zauritua,
ezurrac agarturic.
Vorz aldiz passaturic
milletan azotea. &

Coroaturic zaude,
baña nola? Errenes.
Ni neure becatues
nago penaric gabe?
Viotza aldenic alde
passa balez nerea! &.

Nola tresnac baiceuden
larruari ichiquiric,
bazaude larruturic,
assi orduco billuzten
eta etzara erdiratcen
emen, becatorea? &

Egarriac zu ceunden,
eman dizute ozpiña.
Eta nere aleguiña
nondic gusto izanen?
Ya, bada, assi nadien
progatcen gurutcea. &

Guelditu eztire erchiric
Jesus zure zauriac,
ceruco atariac,
aurquitceco idiquiric.
Ar zadan oraydanic
araraco videa.
Dela possible, Jesus, &.

<299> **Calvarioaren estacioetan**

Bada, izanda nigatic
zure eriotcea.
Dela possible, Jesus,
berriz zu ofenditcea!

1
Jesu Christo loturic,
dago emen billucia,
galduric iduria,
guzia zaurituric,
vorz aldiz passaturic
milletan azotea.
Dela possible, Jesus,
berriz zu ofenditcea!

2
Gurutce pisu baten
carga soiñ flacoetan,
illceco bere artan,
imiñi cioten emen.
Pensa, zu cembat zauden
Jaincoari costea. &.

3
Cargac icaraturic
gucia dezaquena
ceruac eguin tuena
lurrean eroriric,
chutitceco lagunic
eztuzu, gaun[1024] nerea. &

4
Ona non topatu cen
ama sanduarequiñ,
nolaco penarequiñ
Maria guelditu cen!
Aren atcean joan cen.
O, cein gucis tristea! &

5
Gueyago penagatic
eman ciote lagun bat,
viciric calvariorat
ellegatceagatic,
merchede eguiteagatic
etce izan merchedea.

6
Cego, bada,[1025] beteric
odolez aurteguia,
guelditu da gucia
misean marcaturic,
bere pagua arturic
doaye content andrea.

7
<300> Erorcen da lurrera,
berriz, Jainco gurea,
nola, becatorea,
emmendatcen etzara?
Zuc eguin duzu, bada,
ain pisu gurutcea. &

8
Bada, eracusten zaizu
emen negar eguiten.
Ezpaduzu icasten,
zuc viotcic eztuzu,
edo aiñ gogor daucazu
nola dagon broncea. &

9
Irur aldiz erori eta
escu ematen eztiozu?
Cein cruela Jesusequiñ,
cein cruela zaraden zu!
Becatuan egon nauzu?
O, zure dohakabea! &

---

[1024] gaun] Ondarrak dioenez, eskuizkribuan *gaun* jartzen du, baina *jaun* zuzentzen du, baina guk eskuizkribukoa mantedu dugu <g> horren ahoskera isla bailezake.

[1025] bada] Ondarrak dioenez, *bata* dago eskuizkribuan, baina guk ere zuzendu egin dugu.

10
Zauriac billuztean
Jesuseri berritcen,
eta etzaizu erdiratcen
viotza au pensatcean
ambat gendeen aurrean?
O, Jesusen alquea! &.

11
Bi ladronen ertean
Jesus imincen dute,
zaticatcen ereute
itcequi jossitcean.
Zuc culpa berritcean,
berritcen da colpea. &

12
Lurra da icaratcen,
ilcean jaun andia,
illuncen iguzquia,
arriac arrallatcen.
Eta, alare, berazten
ezta viotz zurea? &

13
Josephec erauxiric
bere amac arcen du
gorputza, eta icusten du,
declaratceco ezta itcic,
bere besoetan illic
bere seme maitea! &

14
<301> Gorputza Jaunarena
dago emen orciric,
passioas oroituric,
bego ongui ill nai duena.
Devocioric obrena
maiz ontan pensatcea. &

Penetan lagun denac
glorian ere bear du,
Christo emen icusi du
vizturic Magdalenac.
Guero gozo nai duenac
auta orai penatcea. &

### S. Josephen gozoac

Dut, Joseph, placer andia
zure gozoengatic.
Laudatcen dut argatic
Jaincoa eta Maria.

1
Nola ceunden aleguere[1026]
izanic avisua
zure esposac fruitua
lorea galdu gabe
cecarrela? O, nolare,
gozoaren eztia!
laudatcen dut argatic
Jaincoa eta Maria.

2
Fite doaci, contentic,
arzayac portalera,
aurraren icustera
cerutica deituric.
Itci zute vozturic
zure viotz gucia. &

3
Aurrari imiñi diozu
Jesus, icen dulcea.
«Gure salvazalea»
ontan erran nai duzu.
Bozcarioa artu duzu
orduan ez chipia. &

4
O, nola voztu ciñan,
cela redentorea,
cela re señalea
Simeon aditcean.
Oni ere ematean
Jesus aurrac vicia. &

[1026] aleguere] Ondarrak ohartarazten duenez, «lerroak 8 silaba ditu, 7 izan beharrean.»

5
<302> Segur content ziñela
ceurorrec icustean
eroriric lurrean
idolac baceudela,
eta garaitcen zuela
aurrac idolatria. &

6
Atratceco Egiptotic
zarade avisatua.
Nolaco contentua
orduan zaude arturic!
Dagola Herodes illic
etorri da berria. &

7
O, cer bozcarandea
aurquitu cinduenean
zuc doctoren ertean
ceure Jesus maitea!
Cer gozoa zurea!
Mututcen da emen mia.
Laudatcen dut argatic
Jaincoa eta Maria.

<303> **San Nicolas gloriosoari gozoac**

Anitz dezaquezuna
zara, bada, ceruan.
Adi zazu, Nicolas,
dagona trabajuan.

Jaten baño barutcen
zaude len icasiric,
zu bi aldiz astean
titian ceundelaric.
Aditu ezta orlacoric
len ta guero munduan.
Adi zazu Nicolas &.

Daquizu erremediatcen
laceriaric andienac.
Ezconceco doncella
dote faltas ceudenac
eta aurquitcen cirenac[1027]
ya galceco puntuan.

Issasoa badago
aguitz assarraturic,[1028]
deituez guerostic zu
ya dago mansaturic.
Bada, asseguraturic
gaude zure amparuan.

Erremediatcen tuzu
maingu eta baldatuac.
Zuc uzten badaquizu
vistarequiñ issuac,
libre ere cautivuac
beren naitu lecuan. &.

Estudiante nobleac
ostatariac il tu.
Gatz arturic ceudenac
zuc tuzu guero vistu.
Ziñuzten, bada, deitu
il bear zuten ordua.[1029]

Garcelean badago
obenic gabe dena,
badago afligituric
umeric[1030] eztuena
aurquitcen nai duena
du zure socorruan.
Adi zazu Nicolas &.

---

1027 cirenac] Ondarrak dioskunez eskuizkribuan *cirenat* dago.

1028 assarraturic] esk. *assaraturic*.

1029 ordua] Ondarraren oharra: «Lerro honen ondoan *choiZZ sinesco moduan* ezabatu du eta beheragо ipini, hots, *Sacerdote bat zuten* lerroak hasten duen bertsoan. Kopiatzen ari dela esan nahi ote du honek? Baina, bestek egindakoa kopiatzen ala berak moldatua aldatzen?»

1030 umeric] Ondarraren oharra: «*Nafarroako* testuetan hasieran h- duela idatzi ohi da "hume".»

<304> Beiñ bacego butzuan
guizon bat eroriric.
Nor oraiño galdu da
zuri gomendaturic?
Atra da andic viciric
egun biden ondoan.

Sacerdote bat zuten
mairuec arrapatu,
baña zuc ayenganic
duzu ere libratu.
Zu ciñuzan otoiztu
choill siñesco moduan.

Segur sendatcen[1031] ditu
eritasun guciac
zure obian dagon
oliozco iturriac.
Gure affectu chiquiac
zuc arzquizu carguan.

Eztaiztequela conta
zuc eguiñ milagruac
segurqui erraten digu
Eliza ama sanduac.
Gauzquizu, otoy, artuac
gu zure gomenduan.
Adi zazu Nicolas
dagona trabajuan.

*2.3.10.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, nabarmena da igurzkari eta afrikatuen arteko bereizketa. Bertso hauetan <tc> eta <tz> erabiltzen dira afrikatu bizkarkarirako: *utci*, *etzara* (291, 65), *etzaudela* (292, 83). Aldiz, <ss> erabiltzen da apikarirako: *arrassean* (292, 97), *arrassaldean* (292, 109). Bestalde, <x> erabiltzen da, baina ez bide du beti hots bera islatzen, batzuetan afrikatu igurzkariaren ordez dagoela dirudi, baina bestetan igurzkari sabaiaurrekoa edo belarra islatzen du: *liquixaren* (296, 134), *luxuriosoa* (297, 138) baina *lujuriazco* (297, 141), *exaiac* (296, 114), *exayarequiñ* (296, 126). Agian hiperzuzenketagatik, batzuetan igurzkaria esperoko genukeen lekuetan afrikatu bizkarkariari dagozkion digrafoak agertzen dira: *lutcea* (294, 197), *gutziac* (296, 82). Oro har, ez da grafia kulturik salbu eta *prompto* (297, 133) hitzean duguna.

Fonologia aldetik badira azpimarratu behar liratekeen zenbait ezaugarri. Nafarroako hainbat hizkeratan ohikoa denez, *oa-* hasiera duten hitzetan *g-* gehitzen da: *goarcabean* (292, 82), *goatcean* (292, 117). Bestalde, hiatoa saihesteko adibide bat topa daiteke testuan: *igasi* (290, 21). Horrekin batera, bokal arteko herskari ahostuna galtzen da batzuetan: *despeida* (292, 123), *bauzu* (294, 13), *despeitu* (295, 38), *oteuzu* (296, 74), *ereute* (300, 68). Sinkopa oso indartsua da, eta adibide andana aurki dezakegu: *arla* (290, 25), *atra* (290, 29), *batre* (291, 45), *atratcen* (290, 50), *obrenean* (292, 225), *artraño* (294, 178), *obrenean* (296, 135). Maileguetan *-on* amaitzen diren hitzak hala mantendu dira: *ladrona* (292, 81). Kontsonante multzoei dagokienez, *-rz-* mantentzen da: *vorz* (*passim*), *bercela* (295, 20), *ainberce* (295, 41).

Morfologiaz den bezainbatez, ergatiboan *-ek* aldaera erabiltzen da: *Condenatuec orai cer emanen lukete*. Artikuluaren erabilerari dagokionez, *ceruco zarade* (290, 12) dugu, mugagabean; dena dela, silaba kopurua mantentzeko izan liteke. Erakusleen artean *obec* 'hauek' (294, 180) daukagu, baina *g*-dun *gura* ere badago: *zurruca gura* (293, 135). Izenordainen artean *arrec* 'hark' (291, 40) dago. Posesiboetan *nerea* dugu lehen pertsonan *eu* > *e* eginda, eta ez bide da Linschmann-Aresti bete-

[1031] Sendatcen] Lehenbizi *curatcen* idatzi du Ondarrak dioenez.

tzen: *nola viotz nerea zaude ossoric*. Postposizioei dagokienez, ablatibo pluralean *-etatik* daukagu kasu gehienetan, *infernuetatic* (290: 20), *ocasioetatic* (292, 78), baina behin *ocasioetaric* (297, 142) lekukotzen da, eta beste behin *cerutica* (300, 15). Bizidunen kasuan, behin bada ere, azken bertsoan *-ganik* agertzen da: *ayenganic* (304, 51). Soziatiboan kasu gehienetan *-rekiñ* aldaera erabiltzen da: *munduarequiñ* (291, 33), *guezurrarequiñ* (296, 111), *lurrarequiñ* (296, 114). Hala ere, bi aldiz *-reki* agertzen da: *juramentuarequi* eta *itcequi* (300, 69). Instrumentalean aldaera apikaria da nagusi: *berris* (291, 75), *siñes* (291, 76), *suspiros*, *dolores*, (292, 124), *ayes* (292, 125); hala ere, *odolez* (299, 38) dugu bertsoetako batean, baina hor bertan *passioas* (300, 86) ere badugu. Partitiboan *-rika* dugu behin, *indarrica* (292, 118), eta *-rik* bi aldiz: *culparic* (297, 140), *beteric* (298, 14). Adlatiboan, oro har, *-ra* erabiltzen da: *missionera* (290, 1), *plazara* (296, 80), baina behin bada ere *-rat* erabiltzen du: *Calvariorat* (299, 33).

Aditzetara jauzi eginez gero, geroaldian *-en* aurkitzen dugu *-n*-z bukatzen diren aditzekin: *icenen* (291, 28), *emanen* (293, 138), *izanen* (293, 152). Jokatuei dagokienez, *izan* aditzaren hirugarren pertsonako adizkiak *dire* (296, 80), *eztire* (298, 44) agertzen dira, analogiaz ziurrenik. Bigarren pertsonan *zarade* (*passim*) pleonastikoa agertzen da, baina baita *etzara* (*passim*) orokorra ere. *Joan* aditzaren forma jokatuak hauek dira: *zoaci* (291, 39), *badoazi* (292, 93), *doaye* (299, 41), *doaci* (300, 13). *Eduki* aditzaren pluralgilea *-zki* atzizkia da: *barimazauzqui* (291, 37). Aginterazko formetan *etorri* eta *izan* aditzetan *-z* falta da: *zato* (*passim*) eta *zaitela (passim)*. Iraganean *-n* mantentzen du eskuarki: *imiñi cioten* (299, 26), *guelditu cen* (299, 28), *joan cen* (299, 29). Edonola ere, iraganeko *-n* markarik ez duen kasurik badago, baina soilik azken hiru poemetan: *eman ciote* (299, 32), *etce izan* (299, 36), *cego* (299, 37), *zute* (299, 17), *bacego* (304, 43). Adizki aferesidunak ohikoak dira bertso hauetan: *nai tuzu* (290: 19), *deicen tuzu* (293, 154), *bere contra tu exaiac* (296, 114), *eguin tuena* (297, 127; 299, 21), *erremediatcen tuzu* (303, 24), *il tu* (300, 31), *zuc tuzu guero vistu* (303, 33), baina behin *sendatcen ditu* (304, 55) agertzen da, agian silaba kopurua osatzeko izan liteke. Indikatibokoak ez diren perifrasietan aditzoina mantentzen da: *adi zazu* (290, 6), *utzazu* (290,7), *examiña zazu* (291, 42,). Bestalde, *itzazu* aditz laguntzailean aldaketa gertatu da eta *-zki-* erabiltzen da: *uzquizu* 'utz itzazu' (290, 22), *arzquizu* 'har itzazu' (304). Azkenik, *eldu da* erabiltzen du burutugabea islatzeko: *eldu da ya guero oliagura* (293, 132).

Sintaxiaz den bezainbatez, azpimarratzeko dirateken hainbat kontu badira. Batetik, *atrebitu* aditzarekin osagarria adlatiboan agertzen da, ondoko adibideak erakusten dutenez: *nola atrevitcen zara becatuan locarcera?* Bestetik, helburuzko perpausetan *-kotz* atzizkia erabiltzen da: *confessatcecotz* (296, 145). Horrezaz landara, 'Xrekin Y' egitura kopulatiboaren adibide bat agertzen da: *Lurrarequiñ cerua bere contra tu exaiac, juramentu eguilleac* (296, 113-115). Amaitzeko, badirudi genitiboa erabil daitekeela destinatiboaren esanahiarekin: *Murmurazalearen izanen da pagua betico sua* 'Murmurazalearentzat izanen da ordaindu beharrekoa betiko sua'; hala ere adibide hori hiperbatona ere izan liteke: 'murmurazalearen pagua izanen da betico sua'.

Lexikoaz den bezainbatez, *biderante* 'gidari' agertzen da. *OEH*n ez da jasotzen, baina *vider[an]te* agertzen da Goñerriko sermoi batean (Ondarra 1994: 531). Bernard Larregik 1777an «iduri zuen biderante bat» eta «eta bethi goateko abian iza-

nen zarete bideranteak bezala» dakartza, eta Salvat Monhok XIX. mendeko olerkietan «Aingeruen ogia da / Egin bideranten bazka, / Egiaz haurren ogia,/ ez oren janaria».

Horrezaz landara, aipagarri dateke *Bozcarandea* (300, 43). Itxuraz, larramenditarra badirudi ere, ustez bertsoa *Hiztegi Hirukoitza* argitaratu aurrekoa da. Halere, Larramendik bere hiztegian ez dakar hitz hori.

Testuan, bestalde, *ellegatuco* (292, 85) eta *ellegatceagatic* (299, 34) aldaera ageri da, *OEH*ren arabera aldaera nafarra da, baina ez dugu lehenagoko adibiderik aurkitu; aldiz, *allegatu* dugu 1743ko bigarren sermoian. *OEH*ren araberan, bestalde, Larraungo aldaera bide da *aurtegi*. Testu honetan birritan dugu aldaera hori: *aurtegui* (298, 13), *aurteguia* (299, 38). Larraundik kanpo, Gesalatzen ere *aurtegi* agertzen da Martinez Morentindarren testuetan; ez, ordea, Elizalderen dotrinan, bertan *aurpegui* baitago. Amaitzeko, *secularean* (296, 103) agertzen da testuan. Ondarrak *seculaco* espero dela dio, baina *secularean* errima egiteko baliatzeaz gain, *OEH*n esaten denez, Azkuek Gipuzkoako goi-nafarreran jaso zuen eta Orixek ere erabili zuen *Euskaldunak* lanean.

## 2.4. GOI-NAFARRERA ZAHARREKO TESTU LUZEAK

Hirugarren eta azken multzo honetan goi-nafarreraz idatzitako testu luzeak ditugu. Orotara, hiru liburu argitaratu dira atal honetan editatu ditugun lekukotasunak.

Goi-nafarrera zaharra ez da besteengandik nabarmentzen dituen liburu argitaratuen kopuru haziagatik. Bi autoreren hiru liburu heldu dira gugana. Guztietan zaharrena Beriainen *Tratado de como se ha de oyr missa* da, eta 1621ean ikusi zuen argia. Bost urteren buruan, 1626an, autore berberak argitaratu zuen *Dotrina Christioarena euscaras*. Ez dugu beste liburu argitaratuen berri, harik eta hurrengo mendeko 1735ean Frantzisko Elizaldek *Apecendaco doctrina christiana uscaras* argitaratu zuen arte.

Beraz, testuen edizioen azken atal honetan bi autore horien hiru obrak editatu eta aztertu ditugu.

### 2.4.1. Joan Beriain

Aztergai dugun garaian, Joan Beriain utergarra da Nafarroako idazle nagusietarik; Axularren garaikidea izan zen. Bera da, Lekarozek (2013d) esan bezala, «Nafarroak emandako euskarazko idazlerik goiztiarrenetako bat».

Zenbait aldiz ikertu da bere bizitza, eta lan sakonena, ezbairik gabe, Jimeno Juríorena (1988) da. Dirudienez, 1566 inguruan jaio zen Utergan eta 1633an hil zen. 1590. urtean subdiakono izendatu zuten; 1592an Orbaibarko Etxaguen zen apaiz eta bertan egon zen, harik eta 1602an Utergara apaiz kargua betetzera itzuli arte. Dakigunez, erlijiozko bi liburu elebidun idatzi zituen *Tratacen da nola ençun vear den meza —Tratado de como se ha de oyr missa* gaztelaniaz— 1621ean eta *Dotrina Christioarena euscaras* 1626an.

Ez dakigu autore honek geroko autore nafarrengan eraginik izan zuen. Dena dela, Larramendik *Corografia*-n nafarrerak lapurterarekin duen berdintasunaz mintzatzean,

Beriain aipatu zuen, baina dirudienez dotrina bakarrik zuen ezagun, ez baitu besterik aipatzen. Halaber, *Hiztegi Hirukoitz*ean euskaraz idatzitako liburuez ari delarik, Beriainek 1626an idatzitako dotrina aipatzen du.

Vinsonek idatzitako bibliografian (1984: 63-64) Beriainek idatzitako dotrina bakarrik aipatzen du (13. zk), dirudienez Larramendik emandako erreferentziak baliatuz, liburua aurrean izan gabe (Urkixok Vinsonen bibliografiari egindako oharren arabera, bederen); aldiz, ondoren gehitutako eranskinean tratatua aipatzen du (12bis), eta orduan badirudi liburua bera esku artean izan zuela. Besteren artean, liburuaren tamaina eta orrialdekatze hutsak ematen ditu:

> Gr. in-8 ou plutôt pet. in-4º de (viiij-I24·(iij) fts. Erreurs de pagination: 98 pour 89, et série 117, 118, 119, etc. pour 115. 116. 117, etc. Là où j'ai mis le signc +, se trouve sur le titre un bois qui représente deux anges élevant le S. Sacrement.

Beriainek argitaratu zituen liburuak elebidunak ziren arren, guk hona euskarazko zatia bakarrik ekarri dugu, bertako euskara aztertzea baita helburu. Hori dela eta, atal hau bitan banatu dugu; batean 1621eko tratatua editatu eta aztertuko dugu; bestean, aldiz, 1626ko dotrina.

### *2.4.1.1. Tratacen da nola ençun vear den meza*

Arestian aipatu bezala, *Tratacen da nola ençun vear den meza* da Juan Beriainek argitaratutako lehen liburua. Iruñeko Carlos Labaienen inprentan publikatu zen 1621ean, zegozkion zentsura guztiak gainditu ondoren. 1620ko iraileko data dute onespenek, eta Etxalaz doktoreak, Zalba artxidiakonoak eta Miguel Huartek sinatu zituzten.

Liburua, izenburuak iradoki bezala, meza entzuteko gidaliburu bat da; besteak beste, gai hauek lantzen ditu: apaizaren jantziaren esanahia; eserita, zutik edo belauniko noiz jarri behar den; meza entzuteak ekar ditzakeen onurak eta ez entzuteak dakartzan gaitzak.

Liburuaren edukia gaztelaniaz eta euskaraz idatzita dago, txandaka; kapitulu bat gaztelaniaz, ondoren berbera euskaraz. Hala ere, gaztelania hutsez daude, batetik, Martin de Alcoz idazkariak idatzitako «Tassa», Miguel Huartek hutsen zerrendari egindako oharra, Etxalaz doktoreak 1620ko irailaren 26an idatzitako onespena edo baimena, Zalba artxidiakonoak Alonso de Maço idazkariaren aurrean 1620ko azaroaren 6an idatzitako onespena eta Miguel Huarteren onespena; eta, bestetik, Beriainek Iruñeko kabildoari eskaintzen dion «Epistola dedicatoria al muy illustre cabildo de Pamplona en sede vacante» eta irakurleari idatzitako «Al lector» atalak. Orotara 14 orrialde dira, baina ez dute zenbakirik; behin edukian sartuz gero hasten da orriak zenbatzen, 1etik hasi eta 126v-ra. Amaieran, zenbatu gabe, aurkibidea dator, lehenik gaztelaniazko edukiena eta jarraian euskarazkoena: orotara 6 orrialde. Horietan, bai gaztelaniazkoari bai euskarazkoari, izenburu batzuetan orri zenbakia falta zaie eskuinean.

Askotan aipatu izan da Beriainek zergatik idatzi zuen liburua bi hizkuntzetan; eta irakurleari egindako hitzaurrean argi adierazten du:

> Escrivo en Romance y bascuence lenguages deste obispado, y aunque en diferentes partes del ay en algunas cosas, diversos modos de hablar, yo escrivo el que se habla en Pamplona, cabeça deste reyno, y obispado de Navarra, que es el que se habla en la ma-

> yor parte del, donde se habla bascuence, y el que mejor se entiende en todas las partes, y quando a alguno le pareciere que en algunas cosas no se entiende de lo que escrivo en Romance puede sacar el bascuence que se usa en su tierra. (Beriain 1621: «Al lector»)

Alegia, XVII. mendearen lehen erdialdean gaztelania eta euskara, biak zituen Beriainen bertakotzat; eta, euskarari dagokionez, Iruñekoa zeukan ulerterrazena eta erabiliena.

Liburuaren edizioa zaindua da, eta oso huts gutxi ditu. Nolanahi ere, ohikoa denez, badira batzuk. Esaterako, liburuaren bukaeran datorren «Euscarasco capituloen tabla» horretan lehen zazpi izenburuek orri zenbakiak falta dituzte; aldiz, zortzigarrenetik aurrera badute dagokien orri zenbakia. Edizioan zehar markatu ditugu aurkitu ditugun errata gehiago.

Vinsonek (1984: 12bis) dakarrenez, orduan liburuaren ale bakarra ezagutzen zen, Bonaparteren ondarean katalogoko 653 zenbakiarekin zegoena. Nolanahi ere, gerora ale gehiago ezagutu ahal izan ditugu. Camino eta Lakarrak (1993: 1029, 1. oharra) dakartenez, Chicagoko Newberry liburutegian dagoen Bonaparteren ale horretaz gain, Julio Urkixoren liburutegian eta Madrilgo San Isidro liburutegian ale bana dago. Beste ale bat bide zuen José M. de Huarte Valdeterrazoko markes iruindarrak. Lehendik ezagunak ziren[1032] ale horiez gain, Austriako Biblioteka Nazionalean aurkitu du Ricardo Gómezek beste alea, eta sarean bertan digitalizaturik ikus daiteke (cf. § 1.2.2 atala); hain zuzen ere, ale horretan oinarritu gara gure edizioa egiteko. 1980an Hordago argitaletxeak Beriainen obra honen faksimilea argitaratu zuen, Bonaparteren alea baliatuz, eta horrekin erkatu ondoren Austriakoa tirada berekoa dela esan daiteke.

Euskalarien artean maiz aipatu izan den liburua bada ere, dakigula ez da orain artean liburuaren edizio kritikorik egin. Halere, sarean ikusgai da Iñaki Caminok Klasikoen Gordailurako (hemendik aurrera KG) paratu zuena; bestalde, Aitor Aranak Beriainen obra honen edizio bat argitaratu zuen 2013an, grafia gaurkotuarekin eta hitzaurre labur batekin. Edizioa prestatzeko Hordagok erabilitako ale berbera erabiltzen du eta, ondorioz, orrialde batzuk falta ditu.

#### *2.4.1.1.1. Testua*

**Tratado de como se ha de oyr missa**
**escrito en romance y bascuence, lenguages de este obispado de Pamplona**

Dirigido al muy illustre cabildo de Pamplona en sede vacante.

Compuesto por el Licenciado don Iuan de Beriayn, abad de Uterga

Año 1621

En Pamplona.

Con licencia del Real Consejo de Navarra: Por Carlos de Labayen. Véndese en la misma emprenta, a la cuchillería.

---

[1032] Camino eta Lakarrak (1993) Pérez Goyenaren erreferentzia ematen dute, eta Urkixoren alearen berri eman arren, Koldo Mitxelena Kulturunearen katalogoan ez dago alearen arrastorik.

<6v> **Tratacen da nola ençun vear den meza**

**Lembicico capituloa, ceñetan adicera ematen bayta cer den meza**
[*gurutzea*]

Gauza ciertoa da ece gauza bat eguinen badu persona batec ongui bear duela jaquin cer gauza den eta nola bear duen eguin, bercela eztuela eguinen edo eguinen duela gayzqui. Ala, bada, meza ongui ençuteco, ceñetan baytirade mysterioac ayn andiac, bear du jaquin cer den eta nola bear <7r> duen ençun, bercela eztu ençunen ongui.

Meza da sacrificio eguitea Christo gure iaunas, eta adicera emate bat cer guregatic eguin izandu çuen vere vician eta herioçean. Eta hau nola den obequiago adiceco, bear da jaquin nola mezan daucagun presentean Iaungoycoaren semea guizon eguin cena, ceyn concebitu içandu baytçen andre dona Mariaren sabelean Espiritu Sanduaren obras, eta jayo cena arenganic gueldicen cela beti virginic, eta circuncidatu çutena eta Erregue Magohec adoratu, templora eramo çutena eta Symeon sacerdote sanduac vere besoetan artu içandu çuena, doctoren artean egondu cena, ceyn ibildu baycen Iudeaco eta Galileaco carriquetan eta placetan eta ceymbat echetan eracusten guciey videa, eta oray mezan sacerdotearen agotic ençuten dugu evangelioa, ceñetan baytaude escrivaturic horduan munduaren <7v> salvazalleac predicatu cituen itzac verac. Eta, ala, oray ezta içanen provechu gutiagorequi, baldin nay badugu ayhesas aprovechatu, alas eta dutenean horduan çuten virtutea vera. Mezan daucagu presentean sacramentu eta sacrificio sandu au, oray mezan errecebicen eta ofrecicen dena, ordenatu çuena, oray eguiten dituela milagro ayhec verac, Orzegun Sanduan eguin cituenac, sacramentu sandu au ordenatu çuenean, ceren horduan milagro eguiten çuela itçen virtutes izuli çuen oguia vere gorpuçean eta ardoa vere odolean ematen ciotela facultade eta podore au vere discipuluey eta ayhen ondoreco sacerdote guciey. Eta, ala, oray sacerdoteac mezacoan erraten dituen bezala itz ayhec verac, aren icenean izulcen du oguia Iesu Christoren gorpucean eta ardoa aren odolean alaco maneras ece itzac consagraciocoac erranes guero ezpayta an oguiric eta ardoric baterere, baycic ayen lecuan Iesu Christoren <8r> gorpuça eta odola. Eta, ala, bear da aditu erraten denean «içulcen da oguia Iesu Christoren gorpucean eta ardoa aren ondolean», nondic dator erratera S. Ioan Chrisostomo ece mezan daucagula orzeguneco may gucis abarasa hura, eta ala mezan eztugula deusherere gutiago an çen bayno. Mezan daucagu presentean iaun hura ceñec munduan cebillenean errecibicen baycituen becatariac, eta guciey ondasun eguiten ciotena, oray misericordia eta ondasun eta podorea horduan çuenarequi verarequi eta desseoarequi converti ditecen, eta ala barcaceco becatariey veren becatu guciac.

Emen mezan daucagu presentean munduan cebillenean ambat milagro eguin çuena, eta oray mezan here eguiten dituela, ceren oray here sacerdoteac erran itzac consagraciocoac, eta Iesu Christoc milagro eguiten duela içulcen du oguia vere <8v> gorpucean eta ardoa vere odolean, bada hau ezta milagro chiquiago esposalletan eguin çuena bayno, non uras eguin izandu bayçuen ardoa. Aytcetic, da andiagoa. Eta ezta milagro chiquiago oray mezan eguiten

duena, bayta ece Iesu Christo ceruan dagona vere ayta eternoaren escuyan, iaun hau verau an faltaric eguiten eztuela baytago hostia consagratuan eta calizan ardoa consagratus gueros. Eta iaun hau verau mundu gucian hostiac eta caliza ardoa consagratus guero dauden gucietan, milagro hau, diot, ezta chiquiagoa Lazaro resucitatu çuenean eguin çuena bayño. Aytzetic da andiago. Mezan daucagu presentean Iesu Christo atzeman çutena eta gayzqui tratatu Ierusalengo carriquetan eta echetan, açotatu çutena ayn cruelquiro, ceyney eçarri bayçioten buruan coroa errenes eguinicacoa eguiten çutela harças escarnio eta burla, iduquituric burlasco erreguea <9r> cela, eta bere soñetan eraman çuena gurutzea Calvarioco oyanera eta bere bestidurac edequi eta billosiric itcees oñetan eta escuetan atravesaturic, crueldade andiarequi, odola chirriaca ceriola goytitu çutena, non ofrecitu baycen gurutzean guregatic ilcen cela. Bada iaun au verau daucagu oray mezan presentean, vera ofrecicen dela ayta eternoari guregatic. Eta, ala, sustancias den beçanvates, da Orcillare Sanduan ofrecitu cena vera, nola baytio Concilio Tridentinoac, solamente oray ofrecicen den manera mota da diferentea, ceren Orcillare Sanduan gurutzean dolore eta tormentu andia sufricen çuela, eta vere odola itcees escuetan eta oñetan eguin cisquioten çaurietaric ixurcen çuela, eta trabaju ohec errecebicen cituela, munduan ciraden guiçon gaystoenetaric, ceñec etsay andiac bezala crueldade andiarequi piedaderic batere bague atormentacen eta afrentacen eta injuriacen <9v> çutela ofrecitu çuen vere gorpuça eta vere odola vere ayta eternoari gurutzean guregatic ilcen cela. Baya mezan ofrecicen du vere gorpuça eta odola, doloreric eta tormenturic batere bague eta odolic ixuri bague, aytzetic, ceruan duen gloriarequi eta magestadearequi verarequi. Eta comunquiro sacerdote sanduec, Iaungoycoaren adisquidec eta cerviçariec ofrecicen dutela eta ez horduan bezala itz gayztoac erraten dituztela, aytzetic adoracen, reverenciacen eta alabacen dutela.

Mezan daucagu presentean irurgarren egunean iletaric resuscitatu cen iauna, eta guero cerura igan cena, eta vere ayta eternoaren escuyan dagona, ceruco eta lurreco erreguea eta iauna den beçala.[1033] Bada, iaun au verau vere personas iori fiatu bague negocio hau, ez aynguiruey eta berceri, dago mezan, aldarean, sacramentu sanduan adicera ematen digula, eta onetaco memoriara ecarcen digula cer iaun onec eguin <10r> içandu çuen vere vician eta heriotzean guregatic. Oroyt gaytecen harças. Eta eman drazquiogun graciac. Eta alava dezagun eta cerviçatu. Eta aprovecha gaytecen iaun onec vere vician eta heriotzean meregitu cisquigun ondasunes.

Intencioric principalenetatic bat Christo gure iaunac izandu çuena sacramentu eta sacrificio sandu au ordenatu çuenean cen eguin cedin aren memorian. Ala manatu çuen erraten ciotela vere apostoluey eta ayen ondoreco sacedotey «misterio au celebracen duçuen horos, eguiçue nizas oroytzen çaratela, cer eguin dudan çuengatic neure vician eta heriotzean», onetaco gueyago gu obligazeagatic etorcen dela iaun au cerutic aldarera meza erraten den

[1033] beçala] esk. *becala*. Herskaridun aldaera ezagunak dira hegoaldeko goi-nafarreraz, baina Beriainek beti txistukaridun aldaera darabil. Hau litzateke herskaridun adibide bakarra, eta inprentako hutsa izan liteke.

oros, cumplicen digula vere Elizari prometatu çuena: «considera çaçue çuequi gueldicen naycela munduaren azquenerańo», onetaco arcen duela sacerdotearen ministroa bezala, aren partes eta aren icenean atra dedin meza <10v> erratera veztituric veztidures ceyn Eliça sanduac baytauzqui ordenaturic, Espiritu Sanduac eracusiric, ceńec adicera ematen baytigute cer Christo gure iaunac guregatic eguin çuen vere pasioan.

Lembicico veztidura meza errateco sacerdoteac arcen duena deycen da ‘amitoa’, ceńes estalcen baytu burua, eta guero erausten du lepotic vera. Onec adicera ematen digu veloa, ceńes soldadoec passiosco gauhean Iesu Christos escarnio eta burla eguiten çutela estalcen cisquiotela beguiac. Eta ala ematen cisquioten bearraçaldecoac erraten ciotela «adivina çac norc ematen drauan», manera onetan burla eguiten çutela eta onetan placer arçen, eta onla dembora passacen çutela.

Guero arcen du ‘alba’, bayta eliçaco atorra, ceyn meza erraten duenac jancicen baytu. Onec adicera ematen draugu veztidura churia, ceńes Herodesec manatu bayçuen vezti ceçaten irudiric <11r> hari cela guiçon heroa eta juyzio baguea, ceren galdeguinica anniz[1034] gauça ezpaycio respondatu eta veztidura ones veztitu. Eta Herodesec eta corteco gendeac eta soldadoec eguin çuten arças burla, iduquituric heroçat.

Guero arcen du ‘cinta’, ceńes ercicen baytu guerria. Onec adicera ematen draugu nola Christo gure iauna lotu çuten cuerdes pilare batean, non açotatu bayçuten crueldade andiarequi.

Guero arcen du ‘manipuloa’ ezquerreco besoan. Onec adicera ematen digu cuerda ayec ceńes Orzegun Sanduan Iesu Christo atceman çutenean lotu bayçuten.

Guero arcen du ‘estola’, eta lepotic vera eta bularretan atravesacen du alde batetic vercera. Onec adicera ematen digu soca, ceyn eçarri baycioten Christo gure iaunari lepoan seguroago eramoceagatic, eta afrontu gueyago emateagatic harças tiracen ciotela Ierusalengo carriquetan. <11v>

Azquenean gucien gańean eçarcen du ‘casulla’, ceńec adicera ematen baytigu gurutzea Christo gure iaunac vere sońean eramo çuena Calvarioco oyanera artan guregatic ilceco.

Calizac, ceyn baytrama sacerdoteac meza errateco, adicera ematen digu obia ceńetan orci içandu baycen gure iauna munduaren salvaçallea.

Patenac, calizaren gańean dramanac, adicera ematen draugu arria andi ura ceyn eçarri baycioten Christo gure Iaunari obiaren gańean.

Corporaleec adicera ematen digute mayndre garvia eta churia, ceńes mortajatu bayçuten Christo gure iaunaren gorpuça.

Aldareac adicera ematen draugu Calvarioco oyana, non ill içandu baycen munduaren salvaçallea.

Gauça ohec gucioc da ongui considera diçagun, eta ohesas oroyt gaytecen eta eman drazquiogun iaun oni graciac eta cerviça deçagun, cerengatic gure

[1034] anniz] obra osoan behin bakarrik agertzen da hitz hori <nn>-rekin. Gainerakoetan *auniz* erabiltzen du; beraz, lehenengo letra iraulita dagoen *u* izan daiteke. Halere, behin *aniz* erabiltzen du. Hortaz, ezin baieztapen ziurrik egin.

<12r> amoreacatic passatu çuen eta sufritu anbat dolore eta trabaju eta heriotzea ayn dolore eta pena anditacoa. Da iaun onec guregana daucan amoria ayn andia, ece oray necessario içandu baliz trabaju guciac eta heriotzea sufricera eguinen bayçuen guregatic, baya nola hau ezpayta conveni eta bear, nay du egunoros eguin representacio hau, bayta guri memoriara ecarcea cer guregatic eguin duen, onetaco etorcen dela cerutic aldarera meza erraten den horos. Graciac eman drazquiogun. Eta arrazio den beçala, aren cerviçuan emplea gaytecen, nay duela iaun onec atra dedin sacerdotea meza erratera oray erran dugun veztidures reveztiduric aren lecuan. Eta, ala, atracen denean sacerdotea sacristiatic reveztituric beguiratu bear diogu Iesu Christori verari beçala icusi bayguindu cioayenean guregatic ofrecicera, cerengatic sacerdoteac reveztituric doayenean meza erratera <12v> representacen du Iesu Christo gure iauna atrazen dela Pilatosen echetic gurutzea soñetan duela artan Calvarioco oyanean guregatic crucificaturic ilceco.

<16r> **Bigarren capituloa**

**Cembat agradacen çayon Iaungoycoari meza ençutea han ofrecicen çayon sacrificioagatic**

Nola Christo gure iaunac vere vician eta heriotzean eguin çituen ondasunac eta obra guciac, içandu bayciraden aren ayta eternoac ordenaturic, aren gogora eguiteagatic eta aren amoreacatic, eta nola gauza ohec gucioc baytauzqui aren divina magestadeac, oray ayn presentean eta ayn agradaçen çayzquiola nola obratu cituenean eta nola oray mezan ofreciçen bayçayo Iesu Christo vera, gauza eguin eta meregitu cizquigun guciequi, emendic da ece mezan ofrecicen den sacrificioa dela aventajatuago <16v> eta obeago, eta gueyago agradacen çayona comparacioric bague, eces berce sacrificio guciac.

Sacrificio ofrecicea da Iaungoycoari ceimbayt harc criaturicaco gauza ofrecicea, eçagucen dugula iaun au dela Iaungoyco eguiascoa eta, ala, gucien criaçalea eta guciey ondasun eguinçalea, ceñenganic baytitugu ondasun guciac, eta nola iaun au bayta solamente Iaungoycoa verdaderoa eta eguiascoa, eta ez berceric. Ala, iaun honi bear çayo ofrecitu sacrificioa, eta ez iori berceri.

Ezta içandu munduan eta ezta genderic ayn barbaroric eta adimentu gutitacoric, ezpaytute ofrecicen sacrificioac vere Iaungoycozat dauzquiteney falsoac içanagatic, baya Iaungoyco eguiazcoaren baytan sinestatu dutenec iaun honi veroni, nola eguin içandu bayçuen Abel justoac, Iaungoycoaren cerviçariac, ganado çuen oberenetaric escogituric, eta guero Noe justoac passatus <17r> guero tempestade diluvioco andi hura eguin çuen aldare bat, eta han ofrecitu çuen sacrificioa guelditu çen animale garvietatic. Eta sacerdote Melchisedechec[1035] ofreçitu çuen misterio anditaco sacrificioa: oguia eta ardoa. Eta patriarca Abrahannec auniz aldis leycen da nola eguin cituen aldareac, eta ayetan ofrecitu cituen sacrificioac, eta verce aunizec here, baya manera onetaco sacrificioac guelditu cirade, eta acabatu.

[1035] Melchisedechec] jat. *Melchisedechec*. Ergatiboa falta zaio.

Oray evangelioco eta graciasco dembora dichoso onetan ofrecicen diogun sacrificioa Iaungoycoari da Iesu Christo munduaren salvaçallea, Orzillare Sanduan guciengatic ofrecitu cena. Eta, ala, sustancias den beçanbates, da sacrificio hura vera nola baytio Concilio Tridentinoac. Hau da gauza consuelo anditacoa ongui considera deçanarendaco. Ceren hura vera denean, bear du oray mezan ofrecicen dugunean içan ayn poderoso, eta bear du içan ambat virtute <17v> eta fuerça guri gueren becatuac, andiac içanagatic, barcaceco eta becatuengatic çor dugun çor gucias Iaungoycoa pagaceco. Eta bear du içan oray ayn poderoso aren medios erdesteco Iaungoycoarenganic conveni çayzquigun gauza guciac gueuren arimen salvaceco nola erdecico bayquinducen[1036] Orcillare Sanduan, baldin haurquendu baguina presentean calvarioco oyanean, Christo gure iauna gurutzean ofrecitu cenean. Eta ala da ece oray mezan ofrecicen çayonean ayta eternoari agradacen çayo ambat nola orduan, eta ez solamente agradacen çayo sacrificio au gueyago eces berce gauza ofreci al daquioquen guciac, bay eta ecin agradatu zayo beyn ere. Eta ecin agrada daquioque gauzaric baterere, baycic sacrificio onen[1037] medios, nola erran içandu bayçuen ayta eternoac Iesu Christo batayatu eta transfiguratu cenean: «au da ene semea, onericia, ceyn agradacen bayçat denagatic ceren bayta <18r> Iaungoyco bat enequi eta Espiritu Sanduarequi eta, ala, ayn ona, ayn poderosoa nola ni eta Espiritu Sandua, ceyñengatic agradacen bayçazquit berce gauça guciac, eta ez bercela». Bada, iaun hau, ceyn ambat agradacen bayçayo, ceñes ambat gusto eta contentu errecebicen baytu, igorcen digu ayta eternoac cerutic meza erraten den oros guc igor draçogun ofrecicen diogula mezacoan sacrificioan. Eta hau da meza, erran nay baytu igorcea, ceren nola leen igorri içandu bayzuen ayta eternoac vere semea mundura eguin cedin guizon eta ofreci cedin gurutze batean guregatic, ala, oray igorcen draugu cerutic aldarera meza erraten den oros sacramentu sandura, Christio fielec igor draçoten ayta eternorari sacrificioan ofrecicen diotela. Eta, ala, aren medios erdeci deçaten, Iesu Christo gure iaunac vere vician eta eriotcean meregitu cisquigun ondasun guciac, nola baytio Concilio Tridentinoac erraten <18v> duela egunoros ofrecicen diogula sacrificio au, ceren eman drazquigun[1038] Orcillare Sanduan gurutzean ofrecitu cenean meregitu cisquigun ondasunac, eta aren medios barca drazquigun eguiten ditugun becatuac.

Erran denetic atracen da lembicicoric ece meza dela gauça bat ceñetan honrra gueyago ematen bayçayo Iaungoycoari, eta gueyago agradacen çayona eces berce gauça guciac, ceren artan ofrecicen bayçayo, erran den beçala, Iesu Christo, ceñec gueyago honra ematen baytio eces berce gauça guciec, ecin andre dona Mariac, aynguiruec eta sandu guciec eman draçoquete ambat honra eta contentu nola Iesu Christoc. Alaver, atracen da ece Iesu Christori agradacen çayola gueyago meza eces berce gauçac, ceren aren vorondatea baitago gauça gucietan conformaturic vere ayta eternoarequi. Eta ala erran deçaquegu ece Virgina Mariari eta berce sanduey ecin <19r> eman draçoquegutela am-

---

[1036] bayquinducen] jat. *bayquinduen*. Hutsen zerrendan zuzendua.
[1037] sacrificio onen] jat. s*acrificionen*.
[1038] drazquigun] jat. *daquigun*. Hutsen zerrenda zuzendua.

bat honra eta contentu, eta ecin eracutsi deçaquegula berce gauzetan garadela ayen devotoac eta aficionatuac, ambat nola ofreciceas Iaungoycoari mezan ofrecicen den sacrificioa ayen ycenean eta honran. Ez, ceren ofreci baytiteque sacrificioa sanduey, ceren hau iolaco maneras ecin eguin diteque, nola baytio Concilio Tridentinoac. Solamente bear çayo ofrecitu Iaungoycoari oroytcen garadela sandues, ayec eguin cituzten ondasunes eta obres eta oray ceruan ematen dioten glorias. Gucies graciac ematen dizquiogula eta, onequi batean, ofrecicen dizquiogula ayec eguin citusten obrac eta ondasunac, eta ayetan supli ditecen guri falta çayguna eta guregatic vitartecoçale guerta ditecen, otoytz eguiten dutela Iaungoycoaren aurrean ceruan, ceñes gu oroytcen baycarade lurrean.

Bigarrena erran denetic atracen dena da eztela joan bear mezara gogo <19v> gayces eta ecin gueyagos becela, baicic borondate ones eta gogotic, alas eta mezan eguiten çayonean Iaungoycoari ambat cerviçu eta ematen çayonean ambat contentu nola erran bayta. Cer intenciorequi eta nola bear den mezaco sacrificioa ofratu guero erranen da.

<25v>

## Irurgarren capituloa

### Cer eguin bear den leen meza ongui ençuteco eta cer intecio eramo eta cer reverenciarequi eta devociorequi egon bear den

Meza ençutera goazenean eguin bear dirade bi gauza: lembicicoa da consideratu «nora noaye eta certara». Erreguen echetara doacenac ayequi minçacera eta negociacera, lembicicoric pensacen dute eta consideracen, eta auniz aldis, cer tratatu bear duten eta <26r> negociatu eta nola; bay eta gauza importancia guttiago diradenetan. Ongui eguiteco bear da leenic consideratu cer eguin bear den eta nola, san Basilioc dion bezala erraten duela baldin ofiçiale batey, ceñey ematen bayçayo obra bat eguin deçan, artan pensa ezpadez, eta nola eguin bear duen, eztu eguinen edo eguinen du gayzqui. Bada, gauza ayn gutti importacen denetan, ongui eguiteco bear denean lembicicoric pensatu eta consideratu cer eguin bear den eta nola, arrazio gueyago da gauza ayn andian nola bayta meza ençutea, leenic considera dedin nola doayen meza ençutera eta nola bear duen ençun, bercela ezta ongui ençunen.

Bada, meza ongui ençuteco lembicicoric eguin bear dena da alas eta erran denean, ece meza dela representace bat, adicera emate bat cer Christo gure iaunac eguin çuen guregatic vere vician eta heriotzean. Eguin contu doayela Calvarioco oyanera, non ill <26v> içandu baycen munduaren salvaçallea, an presentean aurquencera, consideracios beçanbates, oroytzen dela eta consideracen duela cembat trabaju eta ceyn andiac passatu cituen horduan iaun onec gure amoreacatic eta gu salvaceagatic. Alaver, içanen da ongui oroytzea misterio ayes ceñec meza ençuten duenean Eliza ama sanduac celebracen baytitu eta particularquiro eguiten baytu memoria denbora denaren conforme: nola Eguberrietan Iesu Christoren jayozeas, guero zorcigarren egunean nola circuncidatu çuten, guero Erreguen Egunean nola erregue sandu ayec adoratu çuten eta ala berce misterioes, vere baytan eguiten duela contu ezquila adicen duenean deycen dutela aurquin dedin presentean Christo munduaren

salvaçalleac guregatic eta gure onetan vere vician eta heriotcean obratu cituen misterioetan, eta consideratu eta pensatu cer eguinen nuen, baldin oray dudan fedearequi <27r> aurquendu banința Iesu Christoren iayocean edo erreguec adoratu çutenean edo berce gauzac[1039] eguin cituenean. Claro dago ece edoceñec erranen duela joanen cela gogotic munduaren salvaçallearen icustera, adoracera eta alabacera eta graciac ematera ambat guregatic eguin duen ondasunengatic, eta desseorequi cerviçaceco eta agradaceco nay luen gauzetan eta aprovechaceco ayn ocasio onas escacen liola ondasun auniz eta andiac ala arimarendaco nola gorpuçarendaco. Ala, bada, joan bear dut meza ençutera desseorequi icusteco munduaren salvaçallea arimaren beguies sacramentu sanduan fedearen medios cinestatzen dudala aldareco sacramentu sanduan dagola Iesu Christo, hau da, Iesu Christo icustea fedeas den beçanbates. Eta joan bear dut desseorequi iaun au adoraceco, alabatu eta graciac emateco, eta desseorequi eta propositurequi cerviçaceco eta agradaceco <27v> nay duen gauza gucietan eta escatu necessidade dudan gauza gucien erremedioa barca drazquidan neure falta guciac eta, aurrera, didan favore emendaceco, aren cerviçuan viciceco, eta desseorequi atraceco provechu auniz ayn ocasio onetic.

Eta ceren vere partetic eçar ezteçan estorburic, bigarren gauza eguin bear dena da guendu vereganic becatu mortale dena eta egon Iaungoycoaren gracian. Ceren becatu mortaleac estorbacen du ezteçagun erdeci Iaungoycoarenganic mezacoan ambat provechu, nola atra vayteçaquegu estorbu au guen badeçagu. Ceren becatu mortalean dagona da Iaungoycoaren etsaya. Bada, persona bat baliaye merchede escacera vere erregueri eta jaunari, jaquinica aren contrarioa eta etsaya dela, erran laçoquete nola atrevicen den escacera erregueri merchede eguin draçon, jaquinica dagola aren desgracian. Ala, bada, mezan erdesteco nay duena eta <28r> conveni çayona, bear du guendu vereganic becatu mortalea. Baldin artan badago, duela urriqui eta damu viotzean vere becatu eguines Iaungoycoaren amoreagatic, ceren baytirade aren divina magestadearen contra, daucala proposito firme bat emendaceco eta confessaceco. Urriquimentu eta damutasuna badu vere becatu eguines bear den beçala, deycen bayta contricioa, onen medios bereala guenduco çayzquio becatuac, eta guelditucо da Iaungoicoaren gracian eta adisquide. Onla erdecico du Iaungoycoarenganic escacen diona.

Intencio eramo bear dena meza ençutera doayenean lembicicoa eta principalena da Iaungoycoari contentu emateagatic eta agradaceagatic gauza batean ceñes ambat cerviçacen bayta, nola mezan egotea, eta hartan ofreciceas Iesu Christo vere semea gucis maytea eta onericia.

Bigarren intencioa eramo bear dena da atraceco al daguien provechu gucia <28v> veretaco eta vere proximo lagunendaco, ala viciendaco nola purgatorioan dauden arimendaco, alas eta mezan eguiten diraden oracioac eta sacrificioa ofrecicen dena, guciendaco aprovechacen diradenean.

Cer devociorequi eta erreverenciarequi bear den meza ençuten denean egon, erranic dago ceyn justo eta arrazio den egon gaytecen ez solamente

[1039] gauzac] jat. *gauza*. Hutsen zerrendan zuzendua.

gueuren viotzes eta pensamentues, confessacen dugula Iesu Christo gucien Iaungoycoa eta iauna dagola sacramentu sanduan eta adoracen dugula gueuren criaçallea eta salvaçallea bezala eta, ala, eçagucen dugula ezcaradela digno aren aurrean[1040] egoteco. Bay eta oneças landara, arrazio da gauden belaurico bi belaunes, igilic eta gueldiric; ez beguiracen dugula alde batera eta bercera eta ez minçacen garadela batac bercearequi, nola ascotan auniz egoten bayta ezpallirate atrevituco onla egotera mundu onetaco erreguen aurrean. <29r>

Egon bear da, bada, erreverencia eta devociorequi. Lembicicoric, ceren meza ençuten duena baytago Iesu Christoren aurrean, ceñen aurrean jarricen baytirade belaurico ceruan diraden aynguiruac eta sanduac eta lurrean diraden personac eta infernuan diraden demonioac.

Bigarrena, ceren meza ençuten duena baytago negociacen Iaungoycoarequi, escacen diola auniz gauza eta importancia anditacoac. Argatic sacerdoteac erraten du auniz aldis «*oremus*», avisacen gaytuela otoytz eguin deçagun, ceren hura dela dembora ona negociaceco eta erdesteco Iangoycoarenganic bear dugun gucia. Bada, nor da escacera determinacen denean persona bati auniz conveni çayon gauza bat, ezpaytio escatuco errespeturequi? Considera çaçu nola atarietan dabilçan pobreac esquean, cembat humildaderequi, cembat erreverencia eguiten duten chapela eranciric. Eta ohec gucioc <29v> guiçon bati eta limosna chiqui batengatic. Bada, arrazio gueyago da gu gauden humildade eta erreverencia gueyagorequi Iaungoycoari escacen diogunean ambat gauza eta Iesu Christoren aurrean eta ayn importancia anditacoac eta gueyago conveni çayzquigunac, ecez mundu onetaco gauza guciac. Ceren mezan escacen diogu barca drazquigun aren divina magestadearen contra eguin ditugun faltac eta gueuren necessidade gucien erremedioa, eta digun favore eta gracia ongui viciceco eta, ala, gloria erdesteco. Bada, gauza ohec, dudaric bague, dirade gueyago conveni çayzquigunac, ecez mundu onetaco guciac. Bada, gauza ohec erdesteco Iaungoycoarenganic, garade gu pobreago, ecez munduan gueyen diradenac, baytirade poderoso[1041] eta abaraz gueyen denarendaco. Ceren gauza guciac ala mundu onetan viciceco nola gloria erdesteco bear ditugunac, erdetsi bear ditugu iaun onenganic. Eta <30r> ala arrazio gueyago da gu gauden erreverencia eta devociorequi Iesu Christo gure iaunaren aurrean.

Irurgarren gauza cerengatic egon bear baytugu atenciorequi eta devociorequi da ceren oray erran dugun gauza importancia anditacoac erdesteco ofrecicen baytiogu presente bat gucis abaratsa eta balore anditacoa eta gucis agradacen çayona Iaungoycoari, bayta Iesu Christo munduaren salvaçallea. Bada, persona batec dramanean urresco taça bat balore anditacoa presentaceco erregue batey, eguiten dio cerbayt maneras reverencia eramoceco, escuac garvicen dituela eta veztidura obrenac arcen dituela eta, ala, apayncen dela eta pensacen duela nola bear dion presentatu agrada daquion[1042] beçala cembat. Bada arrazio da daucagun erreverencia gueyago mezan gaudenean, alas eta

[1040] aurrean] jat. *aurean.*
[1041] poderoso] jat. *pederoso.*
[1042] daquion] jat. *daquien*. Hutsen zerrendan *daquiod* agertzen da.

an ofrecicen diogunean eta presentacen munduaren salvaçallea Christo gure iauna, vere <30v> ondasun meregitu cizquigun gucihequi, eta ez lurreco erregueri baycic Iaungoyco eguiascoari, bayta erregue gucien erreguea eta jauna, gauza guciac daquizquiena, eta nay duen gucia eguin deçaquena.

Eusebioc contacen du ece Erromaco gendeac ofrecicen cituztenean veren sacrificio falsoac, etzutela ençuten pregonariaren oyua, baycic erraten ciotela «eguiçue eguiten duçuena pensacen duçuela cer eguiten duçuen. Zaudete gogos eta pensamentus eguiten duçuen gauzan». Eta mauruac sarcen diradenean veren mezquitan, non juntatzen baytirade Mahomari otoyz eguitera, daude ayn atenciorequi, ece sentituagatic edoceyn arroytu, ezpaytirade meneacen veren lecuetatic eta ez minçacen batac vercequi. Bada, arrazio gueyago da christioac dauden devociorequi eta atenciorequi meza ençuten dutenean daudenean minçacen eta negociacen Iaungoyco eguiascoarequi, <31r> alas eta arrazioa eta aingueru beguiracen gaytuena daudenean oyus, avisacen gaytuztela viotzean barrenean gaudela atenciorequi eta devociorequi consideracen dugula, gaudela Iaungoycoaren aurrean aren magestadearequi minçacen eta negociacen.

Laugarrena, egon bear dugu atenciorequi eta erreverenciarequi, cerengatic mezan baycaude[1043] ayngueru sanduen compañian gu ayequi eta ayec gurequi. Dotrina ciertoa da, San Geronimoc dion beçala, ece bapedrac duela ayngueru bat beguiracen duena eta gu acompañacen gaytuena noranay bagoas hara. Eta mezan daude gurequi gure oracioac eta otoytzac[1044] eramoceco Iaungoycoaren aurrera, guregatic otoytz eguiten dutela. Eta, ala, pensatu bear dugu, nola ala bayta, ece baldin mezan badaude eun persona edo gutiago edo geyago, daudela gurequi ambat ayngueru beguiracen gaytuztenac, bay eta berceric gucis auniz. <31v> Cerengatic San Gregorioc dion beçala, mezaco misterioac eta oficioac eguiten diradenean iriquicen dirade ceruac eta jaycicen dirade aynguerruac aldarera. Eta daude erreverencia eta devociorequi, adoracen eta alabacen dutela Iesu Christo ayen eta gure iauna sacramentu sanduan, eta graciac ematen dizquiotela guri eguiten dizquigun merchedes, desseacen dutela gu here gauden erreverencia eta devociorequi Iesu Christo gure salvaçallearen aurrean ayec dauden beçala.

Cierto da, gauza lastima anditacoa, nola egoten baytirade baçuc mezacoan belaurico solamente belaun bates, alde batera eta bercera beguiracen dutela, eta baçutan batac bercearequi minçacen, ezpallitezque atrevi ala egotera mundu onetaco erreguen aurrean, ezpaytirade deus Iaungoycoaren aurrean. Ceren baylliçate descortesia andia. Ala egotea da señale onlacoec dutela <32r> fede eta devocio guti, eta onetan faltacen duten beçala faltacen dutela berce christioac duen obligaciosco asco gauzetan. Aynguiru sanduac içanen dirade aytor gayzqui egote ones eta atrebimentu ones, ceren mundu onetaco erreguen aurrean eguitera atrebituco ez liratena, atrebicen baytirade eguitera Iesu Christo ceruco erreguеren aurrean.

---

[1043] baycaude] jat. *bayçaude*. Hutsen zerrendan zuzenduta.
[1044] otoytzac] jat. *otoytzat*. Hutsen zerrendan zuzenduta.

Berce baçuc egoten dirade, ez oray erran diradenoc[1045] beçala, baya erran baytiteque ayengatic daudela mezan gorpuces den beçanbates, baya viotzes eta pensamentus landan, imaginacen eta pensacen dutela mundu onetaco gauzetan, haziendan edo honran edo verce onlaco gauzetan, ezpaytirade lecu artaco eta ez dembora artaco. San Agustinec dio guiçon guciac vere gorpuzarequi eta viotz gucias eta vere potencia guciequi bear duela egon eliçan oficioac eguiten diradenean ayetan pensacen duela. San Bernardoc corura sarcen <32v> cenean erraten çuen: «ene cuidadoac eta negocioac echedaçue emen ariqueta emendic yçuli arteraño, ceren noaye Iaungoycoarequi minçacera». Mezara ezta eramo bear berce negocioric eta cuidadoric, baycic Iaungoycoarequi tratatu bear diradenac.

<39r> **Laugarren capituloa**

**Cer eguin bear duen meza ençuten duenac lembicitic assi eta evangelioraño**

Atraric sacerdotea reveztituric sacristiatic meza erratera, lembicico itzac erraten dituenac dirade «*in nomine patris, & filii, & spititus sancti*», erran nay baytu, «Aitaren eta Semearen eta Espiritu Sanduaren icenean», avisacen dituela meza ençuten dutenac daudela Iaungoycoaren aurrean, ceñec icusten baytitu eta baytauca contu cer pensacen, erraten eta eguiten duten. Hau onla consideraturic dauden, arrazio den bezala, pensamentu gucias Iaungoycoaren aurrean mezaco misterioac celebracen eta eguiten diradenean, otoyz eguiten dutela aren magestadeari eman drazoten favore eta gracia <39v> sacerdoteari erran dezan meza ongui eta an daudeney; alaver, ençun dezaten.

Eta nola humildadea bayta ondasunen eta obra onen cimendua, eta ceñetatic assicen baytirade gure platica onac, nola erran izandu bayçuen Salomonec, justoac, Iaungoycoaren cervizariac, vere platiquen leenean confessacen du dela becataria. Ala, bereala erraten du sacerdoteac «Ni, becataria», confessacen duela dela becataria Iaungoycoaren eta sanduen eta guiçonen aurrean. Eta humildaderequi escacen du otoytz eguin dezaten Iaungoycoari arengatic, ez solamente ceruan dauden sanduec, bay eta an mezan dauden anayec, sacerdoteac erraten duenean confessioa. Meza ençuten duenac bear du izan viotzean dolore eta damu vere becatu eguines, pensamentus, itzes eta obres, vere criatu çuen iaunaren contra, verari egozten diola culpa, erraten duela «enea da culpa, enea <40r> da culpa, enea da culpa gucis andia» propositorequi eta intenciorequi ez gueyagoric becaturic eguiteco eta andic aurrera aren cervizuan vicizeco eta cumpliceco christioac dituen obligaciohequi, onetaco escacen duela virgina andre dona Mariari eta iaun done Miquel ayngueruari eta sandu guciey eta sacerdoteari otoytz eguin dezaten Iaungoycoaren aurrean, arengatic erraten duela «argatic otoytz eguiten drahuet virgina andre dona Mariari eta iaun done Miquel ayngueruari eta sandu guciey, çaraten otoytz eguille Iaungoycoaren aurrean enegatic, eman drazadan favore obratan ezarceco oray daucadan intencio on au, eta mezatic provechu andia atraceco».

[1045] diradenoc] jat. *denoc*. Hutsen zerrendan zuzenduta.

Erran denetic atracen da alas eta confessacen duenean meza ençuten duenac dela becataria Iaungoycoaren aurrean eta virgina andre dona Mariaren, sandu gucien eta meza erraten <40v> duenaren aurrean, eztuela erran bear cumplimentus eta itzes solamente, nola erraten baytu urriqui eta damu bague eta propositu eta intecio emendaceco, eztuela erraten duenac daquitela onlacohec ece Iaungoycoac ceruan dagonac eguinen duela ayessas burla, eta virgina Mariac, iaun done Miquel Arcangelec eta sanduec. Argatic erran bear da sines damu duela becatu eguines, eta propositu eta intencio emendaceco.

Escatus guero meza ençuten duenac barcacio vere becatues, sacerdotea igan aldarera assicen du meza, horduan da ongui meza ençuten duena asi dedin alabacen duela Iaungoycoa denarengatic. Ceren bayta misericordias eta ondasunes beteric dagon iauna guciey ondasun eguillea, eta ceren barcatu baytizquio becatuac eta nay izandu baytu aurquin dedin ayn ocasio onean aren divina magestadearen servizaceco eta agradaceco eta <41r> atraceco provechu auniz veretaco eta berce christio fielendaco.

Eta nola gure dicha eta suerte onac etorri bear baytu Iaungoycoaren misericordiatic, eta, ala, gurequi usa dezan, bereala sacerdoteac erraten du «*kyrie eleyson, christe eleyson*», erran nay baytu, «Iauna, iducaçu misericordia. Christo, iducaçu misericordia guzas». Eta erraten du bedraci aldis: irur aldis aytari eta irur aldis semeari eta irur aldis Espiritu Sanduari, escacen diola urricari dedin Trinitate iauna eta barca drazquigun gueuren becatuac, pensamentus, itzes eta obras eguin ditugun guciac. Jaquinica ongui Elizac Iaungoycoaren condicioa dela misericordias usacea, eta eztela fastiacen porfiatu izateas, escaceas[1046] usa dezan misericordias gurequi, aytzetic, jaquinica porfiatuas eta auniz aldis escaceas obequi erdesten dela guc bear duguna eta conveni çayguna. Argatic erraten du ambat aldis «*Kyrie* <41v> *eleison, Christe eleison*. Iauna, iducazu misericordia. Christo, iducazu misericordia guzas» sacerdoteac, erraten duen vitartean «*Kyrie eleyson, Christe eleison*» meza enzuten duenac, gucis cines esperança andiarequi eta desseorequi erdesteco escacen duena. Eta determinacen duela guencera estorba dezaquen gucia vereganic, bear du otoytz eguin Iaungoycoari ussa dezan misericordias guciequi.

Guero erraten du sacerdoteac «*gloria in excelsis deo*», erran nay baytu «gloria duela Iaungoycoac goyti ceruan». Itz hoec cantatu cituen ayngueruac Eguberrico gauhean, Iesu Christo gure iauna jayo cenean, noyz jayci baycen cerutic ayngueru bat ematera berria ayn dichosoa eta ona arçayey, ceñec bayceuden iraçarriric, beren ardien beguiracen, erraten ciotela «berri contentu eta placer anditaco bat ematen drauçuet, nola egun jayo zayçuen salvaçallea mundu gucia salvatu <42r> bear duena, bayta Christo gure iauna». Eta, bereala, ayngueru onequi berce ayngueru auniz juntaturic cantatu çuten: «*gloria in excelsis deo et in terra pax hominibus bonae voluntatis*», berce itzac, Elizac ordenaturic dauzqui itz ohec, erraten dituenean sacerdoteac, meza ençuten duenac eguin bear du contu ari erraten çayola berri au, ayn dichosoa eta ale-

[1046] escaceas] jat. *escaseas*.

grea, nola jayo den munduaren salvaçallea, Christo gure iauna. Eta, ala, contentu eta alegria andiarequi bear du alabatu Iaungoycoa eta graciac eman vere misericordia eta ondasun andiagatic eta guri eguiten digunas, ceyn adicera ematen bayçaygu aren jayoce sanduan eta ceren criatu baycaytu[1047] dembora batean ayn dichosoan, ceñetan gozacen baytugu jayoce sandu au, ayn desseaturicacoa ayn dembora lucean ambat patriarcac, profetec eta berce asco gendec, içandu baycen Adan eta Evatic assi eta ariqueta Iesu Christo mundura <42v> etorri arteraño. Ceren martirologio Erromacoaren contura, mundua Iaungoycoac criatus guero ariqueta Iesu Christo jayo arteraño passatu bayciraden borz milla eta lauroguey eta emereci urte. Bada consideraturic suerte eta ventura ayn dicha anditaco au, ençun deçan beçala «*gloria in excelsis deo*», bear du alabatu Trinitate sandua, erraten duela «gloria eta alabançac eta graciac dituela ayta eternoac, ceren eman baytigu vere semea, munduaren salvaçallea. Gloria eta alabançac eta graciac dituela semeac, ceren etorri bayzaygu salvacera. Eta, alaver, dituela Espiritu Sanduac, ceñen amorio andiac guregana iduquiac obratu bayçuen Iesu Christoren jayocea. Eta lurrean dutela baquea guiçonec, vorondate ona dutenec, baytirade iaun onen mandamentuac beguiracen dituztenac. Ceren Iesu Christo gure salvazallearen medios dugu baquea Iaungoycoarequi, ayngueruequi eta <43r> gueurequi eta gueuren proximo lagunequi. Eta ceren iaun onen medios da seguro barcatuco çayzquigula gure becatuac. Eta da seguro eta cierto içanen dugula demonioen contra victoria gure partetic falta ezpadedi». Eta, ala, gogotic eta viotzes bear du meza ençuten duenac laudatu Iaungoycoa erraten duela «alabacen eta bedeycacen zaytugu. Çaradenagatic adoracen zaytugu. Eta graciac ematen drauzquiçugu ceure misericordia eta ondasun duçunagatic. Eguiçu, iauna, gurequi, çaradenac bezala eta guc bear dugun bezala misericordias usacen duçula eta gure otoytzac ençuten dituçula. Çeren çu Iesu Christo gure salvazallea, guencen baytituçu munduco becatuac. Çaude ceruan ceure ayta eternoaren escuyan. Urricari çaquizquigu barcacen dizquiguçula gueuren faltac, ceren çu ceurori eta sollori çarade gure iauna, sandua, Iaungoyco eguiascoa. Aytarequi eta Espiritu <43v> Sanduarequi çaradela ordu onarequi».

Gloria acabatu eta sacerdoteac içuliric meza ençuten dutenetara, erraten du «*dominus vobiscum*. Iauna da çuequi», avisacen dituela daudela Iaungoycoaren aurrean eta dagola icusten duela eta daucala contu cer pensacen, erraten eta eguiten dugun, eta hura dela dembora ona escaceco aren magestadeari merchede andiac. Eta, ala, daudela, arrazio den bezala, respetu eta humildaderequi, nola egon vear baytute Iaungoycoari escatu bear dutenec[1048] ayn ondasun andiac. Alaver, meza ençuten dutenec respondacen dute «*et cum spiritu tuo*. Çurequi here bay», ceren sacerdoteac, Elizaco ministroac bezala, nola bayta ambat diroquena Iaugoycoarequi, esca draçon gucien partes. Horduan erraten du «*oremus*». Oray, bada, Iaungoycoa dagoenean çuequi eta enequi, juntacen ditu bi escuac, adicera ematen duela onetan ece erdesteco

---

[1047] baycaytu] jat. *bayçaytu*. Hutsen zerrendan zuzenduta.
[1048] dutenec] jat. *dutenac*. Hutsen zerrendan zuzendua.

Iaungoycoarenganic escacen <44r> duena eta conveni zayotena, egon bear dutela aren magestadearen amorioan junto. Assicen da, bada, oracioac erraten. Batzuetan escacen dio barca drazquigun becatuac; berce batzuetan digun baquea; berce aldi baçues digun fedea, esperança eta caridadea; berce batzuetan digun ossasuna arimarena eta gorpuçarena, eta virtuteac eta ondasunac salvaceco bear ditugunac; eta berce aldi batzues escacen dio mundu onetaco viciaren passaceco bear ditugun gauzac gure salvaceco conveni diraden bezala.

Sacerdoteac erraten duenean «*oremus*» meza entzuten duenac bear du otoytz eguin eta escatu, Iaungoycoari sacerdotearequi batean, harc escacen diona. Eta adicen eztuenac cer escacen duen latinic ez jaquin faltas, eztidila desconsola; oroyt bedi dagola Iaungoycoaren aurrean, eta humildaderequi eta devociorequi erran braço «Iauna, meza erraten duenac escacen <44v> diçuna Elizaco ministroc bezala, nic, neure partetic, arequi batean otoytz eguiten drauçut eman drazaguçun Iesu Christo gure iaunaren medios». Hau eguiten duela, atraco da ongui despachaturic, ceren, San Pabloc dion bezala, Espiritu Sanduac cumplituco du eztaquienaren eta adicen eztuenarengatic. Eta, ala, emanen çayo escacen duena, guertatuco çayo guiçon leycen eta adicen etzayon batey bezala, ceñec baytu pleytu bat. Eta arequi ongui atraceco conveni zayo egostera peticio bat juezaren aurrean, ordenacen dio vere letratuac, eta procuradoreac leycen du eta ematen dio adicera juezari cer escacen duen guiçon onec. Ez jaquinagatic cer datzan peticioan, guciarequin here aren icenean despachacen da. Hare, oni guerta daquico eztaquion atra vere aucia desseacen duen bezala, ceren aguian ezpaytrama auci ona edo ez ongui informatus edo berce asco maneras. Baya meza ençuten duenac <45r> oray erran den bezala escacen dena, da cierto emanen çayola eta eztiola erranen «eztaquiçu cer escacen duçun», ceren mezan erraten diraden oracio guciac dauzqui Eliza ama sanduac Espiritu Sanduac eracusiric eta ordenaturic. Eta, ala, guciac dirade onac, bayta gauza consuelo anditacoa.

Sacerdoteac oracioac acabatu eta erraten du epistola, bayta predicu bat ceyn predicacen baytu San Pedroc edo San Pabloc edo San Iuanec, Isaiasec, Danielec edo berce profetetatic batec, ceñen medios Iaungoycoa minçatu baycen. Eta eracusten draugu ceruco dotrina eta videa, eta nola bear dugun erdeci. Eta, ala, mezan dagonac ençuten duenean «*lectio Epistolae Beati Petri*» edo «*Beati Pauli Apostoli*», eguin bear du contu nola, ala bayta, San Pedroc eta San Pabloc predicacen digula, nondic atracen da nola epistola bear den ençun devocio andioarequi eta desseorequi atraceco provechu. <45v> Alas eta ascotan joaten garadenean desseorequi ençutera fama duen predicaçalle bat, eta ez içanagatic ayn famosoa, ençuten dugu horon bates, itzic baterere erran bague, nola bada ayn dembora guttian, nola bayta epistola erraten dena, eztugu ençunen ongui eta devociorequi alaco predicazalleac, ayn onac eta fama anditacoac, nola baytirade San Pedro, San Pablo, berce apostoluac edo profetac. Alas eta fedeac eracusten digunean ayen dotrina dela Iaungoycoarena eta, ala, ayn provechosoa gure arimendaco, ar dizagun ayec ematen dizquiguten consejuac. Argatic nay du Elizac ley ditecen. Adicen eztuenac cer erraten den epistolan, otoytz eguin braço Iaungoycoari, eman drazquion adicera aren honraco eta vere arimaren onetan diraden guciac obratan ezarceco.

Epistola acabatu eta respondacen du mezan laguncen denac «*deo gratias*», erran nay baytu «Iaungoycoac <46r> dituela graciac». Alaver, meza ençuten duenac eman bear dizquio graciac Iaunari, cuidado iduqui duenas dembora gucietan eracusteas cer eguin bear dugun aren cerviçuan empleaceco eta ceruco gloria erdesteco.

<52v> **Borzgarren capituloa**

**Cer eguin bear duen meza ençuten duenac evangeliotic assi eta prefacioraño**

Solemnidade andiarequi erraten da evangelio sandua, ceñetan baytaude Iesu Christo gure iaunac munduan <53r> cebillenean erran cituen itzac, eta argatic dute fuerça gueyago. Eta dirade poderosoago guri eracusteco cer bear dugun sinestatu eta eguin, eta onetaco viotzaren aficionaceco gogotic obratan eçar dizagun, ceren guciac dirade vicia ematen dutenac. Gu aprovecha bagaytes bear den bezala Eliza sanduac guri adicera emateagatic cembat devociorequi eta erreverenciarequi, eta cer viotzeco garvitazunarequi bear duen sacerdoteac erran eta hiriac ençun, escacen dio Iaungoycoari[1049] garvitasuna erraten dituela, itzac devocio anditacoac, baya hau uzten dugula meza erran bear duenarendaco. Evangelio sandua ençuten duenac eguin bear du contu ençuten duela Iesu Christo gure iauna vera, eta iaun onec veronec predicacen digula eta ematen dizquigula berriac ayn dichosoac eta onac eta guretaco ayn provechosoac. Ceren evangelio sanduan ematen zaygu adicera nola Trinitatea Ayta eta <53v> Semea eta Espiritu Sandua diraden, irur persona; eta irur persona ohec Iaungoyco bat eguiascoa, eta eztela berceric. Eta adicera ematen zaygu nola Iesu Christo den Iaungoyco eta guiçon, eta nola dagon aldareco sacramentuan presente vere personas Iaungoyco eta guiçon, ematen çaysquigu berriac[1050] ayn consuelo anditacoac becatariendaco, bayta nola Iaungoycoac barcacen dizquioten veren becatuac eta arcen dituela vere adisquidetasunean ematen diotela vere gracia, justoen eta onendaco dela premioa gucis andia ceruco gloria, preso eta cautivo daudendaco dela libertadea, illendaco, erresuscitatuco diradela azquenean, edoceyn necessidade dutenendaco prometacen zayote remedio. Eta berri ohec ematen dizquiguna da Iaungoycoaren semea, guiçon eguin cena, Christo gure iauna. Emendic atracen da cembat devociorequi eta erreverenciarequi eta viotzeco garvitazunarequi bear den <54r> ençun evangelio sandua hau guri adicera emateagatic. Lembicicoric evangelioa erraten duenac erraten du «*Dominus vobiscum*. Iauna da çuequi» avisacen dituela meza enzuten dutenequi dagola munduaren salvazallea, ceñec maystruac bezala erraten dizquiotela munduan ibildu cenean predicatu eta erran cituen gauzac verac. Eta desseoarequi verarequi aprovecha ditecen vere evangelioan eracusten duen dotrinas, ceyn bayta Christo gure iaunarena, gurutzean ill cenarena, guri vicia beñere acabatuco eztena emateagatic. Eta daquigun hau herdestea dagola iaun au imitacean, honrracen garadela eguiteas harc eguin çuenas eta vere evangelioan eracusten diguna obratan ezar-

[1049] Iaungoycoari] jat. *Iaungoycari*.
[1050] berriac] jat. *berrian*. Hutsen zerrendan zuzendua.

ceas. Argatic, leenic eguiten du meza erraten duenac gurutzearen señalea librearen gañean eta guero becoquian, confessacen duela christioaren honraric principalena dela Christo gure iaunaren imitacea eguiten <54v> duela iaun onec vere evangelioan eracusten diguna, eta evangelioco dotrina eta leguea iduquico duela beguien gañean, eta harças preciatuco dela nola eguin bayçuten apostuluec trabajuac passacen cituztenean. Eta injuriac eta afrontuac errecebicen cituztenean, ciace contenturequi eta alegriarequi placer arcen çutela, ceren bayciaquiten artan veren maystrua eta iauna cervizacen eta agradacen çutela. Da gauza ciertoa ece eguitea Iesu Christoc vere evangelio sanduan manacen eta aconsejacen duena, eztela honrraren contra; aytzetic, honrracen da gucis gueyago. Eta, ala, emendic atracen da nola eguiten duten gayzqui uste dutenec galcen dutela veren honratic valdin mendeca ezpadaytez agravio bat eguin edo injuria bat erran dionaganic. Eta eguiten baytute berce honlaco gauzaric asco, demonio gueçurtiac inventaturicacoac, honlacoec daquitela ciertoquiro ece içanagatic <55r> mundu onetan principe juyzioco egunean, non aguertuco bayta gucien aurrean, ceyn den nobleza eta honrra eguiascoa, izanen diradela menospreciatuac demoniohequi batean, ceñen legueac cumplitu baytituste nola erran bayçuen Christo gure iaunac. San Lucasec dion bezala, «alque duenac confessaceas ni guiçonen aurrean, nic içanen dut alque alacoa confessaceas ene aytaren aurrean», erran nay baytu «alque duenac eguitera nic neure evangelioan manacen dudana, iruditurio andic galcen duela honra, ni alquetuco nayz confessaceas neure aytaren aurrean».

Bigarren gurutzearen señalea eguiten du agoan, ceñetan adicera ematen çaygu ece evangelioan eracusten çaygun dotrina bear dugula agoas confessatu conveni denean, bear bada onengatic gogotic vicia eman here.

Irurgarren gurutzearen señalea eguiten du bularrean, ceñetan adicera <55v> ematen çaygu ece evangelio sanduan manacen çayguna bear dugula eçarri viotçaren erdian eta iduqui memorian obratan eçarceco. Argatic, ençuten da evangelioa jayquiric, onetan adicera ematen dugula gaudela prestic eta aparejaturic cunpliceco eta eguiteco han manacen çayguna, eta onen conforme eguinen ditugula gueuren pausuac. Eta sacerdoteac evangelioa erranes acabatu eta bereala arcen du librua bi escues, eta gurutzearen señalea eguin çuen lecuan apacen dio adicera emateagatic evangelioco dotrina bear dugula vorondate andiarequi eta gogotic artu, eçarcen dugula viotzaren erdian obratan eçarceco. Evangelioan cer dion adicen eztuenac latinic ez jaquin faltas, otoytz eguin braço Iesu Christori; alas eta han ençuten duen dotrina denean aren magestadearena, minça daquion viotcera eracusten diola maystrua den beçala, eta adicera eman drazon aren honraco <56r> eta cerviçaceco conveni den gucia, eta eman drazon favore obratan eçarceco, onetaco arcen duela sines proposito eta intencio eguiteco eta cumpliceco iaun onec vere mandamentuetan manacen duena, eta christioaren obligacioequi vere vicice maneraren conforme cumpliceco. Alas eta guciec[1051] dutenean obligacio gauça ohec jaquiteco eta obratan eçarceco eta hau obequiago eguiteco. Beuca des-

[1051] guciec] jat. *guciac*. Hutsen zerrendan zuzenketa bat du, baina ez da azken hizkia argi ikusten.

seo andia al daguien gucian ençuteco Iaungoygoaren itza predicaçallec predicacen dutena, bay eta apez edo vicario edo iolaco maneras arimes cargu dutenec. Arracio da daducaten cuidado igande eta jayetan eracusteas eta adicera emateas vere carguco dituen gendey evangelioan dion dotrina, nola baytio Concilio Tridentinoac eta sinodoac lembicico libruan eta irurgarren capituloan ordenacen duen beçala.

Evangelioa acabatu eta respondacen du hiriac «*laus tibi Chiste*», alabacen <56v> duela Christo gure iauna evangelioan ematen dizquigun berri onengatic eta han eracusten digun dotrinagatic. Eta, ala, meza ençuten duenac bear du Iesu Christo alabatu eta eman graciac, ceren etorri nay içandu bayçuen[1052] cerutic lurrera guri eracustera vide ciertoa eta seguroa, erdesteco ceruco bienaventurança; eta ceren criatu baycaytu denbora ayn dichoso onetan, ceñetan ençuten baytugu ambat profetec eta erreguec ayn denbora lucean desseaturicaco itzac eta ezpaycituzten ençun.

Evangelioa acabatu eta dela señale sinestacen dugula an erraten çayguna, meza erraten duenac erraten du credoa. Horduan da ongui meza ençuten duenac confessa dezan fedesco misterioac, erraten duela vere viotzean «nic sinestacen dut çu ene Iaungoycoa çaradela, Ayta eta Semea eta Espiritu Sandua, irur persona eta Iaungoyco eguiasco bat solamente, eta eztela verceric. Sinestatzen dut çu çaradela gauza <57r> gucien criaçallea, salvaçallea, gloria emançallea. Sinestatcen dut çu, Iesu Christo, çaradela Iaungoycoa eta guiçona, eta çure gorpuça Espiritu Sanduac formatu çuela virgina andre dona Mariaren savelean, eta çure arima criatu eta gorpuçarequi juntatu. Eta çuc, Iaungoycoaren semea, ceurequi gorpuça eta arima juntatu eta, ala, leen Iaungoyco baycic etcinadena, gueros çaradela guiçon here. Sinestatcen dut jayo cinadela virgina Mariaren baytatic, hura gueldicen cela virginic erdi baño len, erdicean eta erdis guero, passatu eta sufritu cinduela passio dolorescoa eta gurutce batean il içandu cinala gure salvaceagatic. Eta jaytci cinala iffernuetara. Eta andic atra cinducela arima sanduenac. Sinestatcen dut irurgarren egunean iletaric erresucitatu cinala. Eta guero ceruetara igan cinala, eta çaudela jarriric ceure aytaren escuyan eta andic etorrico çaradela ilen <57v> eta vicien juzgacera. Oney emanen dioteçula ceruco gloria, ceren beguiratu baytituzte çure mandamentuac, eta gaystoey iffernuco penac, ceren ezpaytituzte beguiratu çure mandamentuac. Gauza ohec eta Eliza ama sanduac sinestacen dituen gauza guciac sinestacen ditut. Ceren baytirade eguiac çuc eracutsi dituçunac eta adicera eman ceure Elizari ala diradela eguiac. Ceren daquit ciertoquiro, çuc Iauna ecin eracutsi deçaqueçula gauza falsoric eta ala eztenic; eta, alaber, ez Eliza ama sanduac, ceren ecin çu, iauna, engaña çaytezque, eta ez Eliza fedesco gauzetan, ceren ecin ior here engaña dezaqueçu, alas eta çu çaradenean maystrua eguiascoa eta verdaderoa, fedesco gauzac eracusten dituçuna. Eta, ala, diot eta sinestacen dut diradela eguiac alas eta çuc eta çure Elizac eracusten eta erraten didaçunean ala diradela». Fedea manera onetan confessacea da gauza bat gucis Iaungoycoari agradacen çayona <58r> eta eguiten duenarendaco provechu anditacoa.

---

[1052] nay içandu bayçuen] jat. *nayçandubayçuen*. Hutsen zerrenda zuzendua.

Credoa erran eta ofrecicen du sacerdoteac ofrenda. Ceren fedeac eracusten digu ece erdesteco ceruco gloria fedearequi batean eguin bear ditugula obra onac, ceren fedea illa da obras eracusten eztena.

Escritura sagratuac contacen du ece sandu patriarca Abrahanec, emanica sineste Iaungoycoari, eguin çuela obra bat ayn andia, nola seme bat içan eta hura ofrecicea aren divina magestadeari. Ala, bada, jaquinica Elizac fedea cinestatcen dutenec bear dutela obras eracutsi, credoa acabatu eta sacerdoteac ofrecicen dio Iaungoycoari duena, bayta oguia eta ardoa; andic fite içul draçon obeturic eta medraturic. Eta ayn medratua izanen da ece ofrenda pobrearen lecuan emanen baytio Christo gure Iaunac vere gorpuza eta odola. Da Iaungoycoaren condicioa gureganic <58v> errecibicen duena errecebicen baytu guri gauza obeagoac emateco, eta ala medra gaytecen.

Dembora onetan, da ongui meza ençuten dutenec ofreci drazoten Iaungoycoari cerbayt; nola baytio doctor Navarroc dela costumbre ona eta alabacecoa herriarena, ceñetan mezacoan ofrecicen baytituzte ofrendac, olatac, arguiçaguiac eta berce honlaco gauzac. Escritura sanduac dio nola Tobias çarrac, Iaungoycoaren cerviçariac, vere semeari eman cion conseju eçarri ceçala oguia eta ardoa justoaren oviaren gañean. Sacerdoteac, ceñec aprovechacen baytituzte otoyz eguin deçaten purgatorioan[1053] dauden arimengatic eta ofrecicen dituztenengatic, ceren temploan ofrecicen diraden gauzac ilen eta viciendaco, aprovechacen dirade. Eta, ala, bear dirade ofratu, liberalquiro eta principalquiro, Iaungoycoari agradaceagatic, ceñec ayn liberalquiro ematen baytigu <59r> vicia, ossasuna, hazienda eta dugun ondasun gucia. Honla ofrecicen dituenac, da gauça ciertoa ece eztuela aren haciendac gutiago balioco; aytcetic, Iaun onec medratuco dio. Ayta Sandu Gregorio çazpigarrenac determinatu çuen christioac bear duela procuratu temploan cerbayt ofrecicera. Ceren Iaungoycoac[1054] dauca Exodoan erranic «ez atorrela ene aurrera deus bague». Eta San Agustinec dio ece emanay eztituenac ofrendac ilen arimen favoretan ofracen diradenac dela excomecatu.

Meza ençuten duenac dembora onetan principalquiro eguin bear duena da ofratu vera Iaungoycoari, vere viotça eta potenciac, erraten duela «Iauna, meza erraten duenac aldarean, duena ofrecicen drauçunarequi batean, bayta oguia eta ardoa, desseorequi medraturic demozquioçun. Eta, ala, oguiaren lecuan ematen dioçu Christo gure iaunaren gorpuça eta <59v> ardoaren lecuan aren odola. Ala, nic ofrecicen drauçuet neure viotza, memoria, entendamentua eta vorondatea, neure beguiac, mia eta verce sentidoac potenciac, neure pensamentuac, itçac eta obrac guciac, desseorequi ones aurrera guciac gueldi ditecen medraturic alaco maneras ece nic pensa dezadan Iesu Christoc nay duen gaucetan, eta nay dudan nic harc nay duena, eta ez berceric. Ene beguiec icus dezaten harc nay duena; alaver, ene bearriec ençun harc nay duena, eta ene mia minza dedin Ayta Eternoac[1055] nay duen bezala. Alaco maneras ece ez nadin vici ni neure baytan, erran nay dut neure inclinacioac eta apetitu gays-

---

[1053] purgatorioan] jat. *purgatorian*.
[1054] Iaungoycoac] jat. *Iaungaycoac*.
[1055] eternoac] jat. *eternoa*. Ergatibo gabe.

tohec nay duten bezala, baycic Iesu Christo vici dedin ene baytan, aren baytan pensacen dudala eta gauza gucietan vorondate ones eta gogotic eguiten dudala iaun onec nay duena». Hau eguiten dela sines desseorequi medraturic gueldiceco da ofrenda ona eta gucis <60r> aniz Iaungoycoari agradacen çayona.

Oguia eta ardoa meza erraten duenac ofratu eta garvicen ditu heri puntac ures, eta guero gucien partes ofrecicen du ofrenda Trinitate sanduari. Eta içulcen da meza ençuten dutenetara erraten duela «*orate frates*», escacen duela guciec otoytz eguin dezaten errecebi dezan Iaungoycoac harc[1056] eta ayhec ofrecicen diotena. Horduan meza ençuten duenac otoytz eguin bear du Iaungoycoari errecebi dezan sacrificio hura aren divina magestadeac gloria duquen bezala, eta meza ençuten dutenec eta berce christio fielec provechu duqueten bezala. Eta oracio onetan,[1057] gasta dezaque dembora hura, ceñetan sacerdoteac erraten baytitu oracio baçuc secretuan guciengatic.[1058]

<68r> **Seygarren capituloa**

**Cer eguin bear duen meza enzuten duenac prefaciotic assi eta consagracioraño**

Oray erran diraden oracioac erran eta sacerdoteac assicen du prefacioa, ceñetan adicera ematen bayçaygu nola Iesu Christo munduaren salvazallea erramu egunean sartu cen Ierusalenen guregatic, an ambat trabaju <68v> passaceco eta passioa eta heriotcea ayn dolore anditacoa. Eta hau considera dezagun, escuac alchacen dituela gora erraten du «*sursum corda*», adicera ematen draugula fite iduquico duela vere escuetan guregatic ambat trabaju passatu çuen Iauna. Eta, ala, dela arrazio dauzquigun gure viotzac alchaturic lurretic pensacen dugula eta oroycen garadela nola datorren aldarera gure amoreacatic munduaren salvazallea cerutic gu ceruco ondasunes betecera. Eta, ala, dembora onetan dela arrazio berce mundu onetaco gauzac utziric daucagun gueuren pensamentua iaun onen baytan. Respondacen dute mezan daudenec «*habemus ad dominum*. Ala dauzquigu». Considera bezate hau erraten duten sines ala ez, ceren gauza gayzqui lizatena eta alque lizana lizate dembora onetan ala erran eta viotza iduquicea lurreco gauzetan eta Iaun oni agradacen etzayzquionetan. Considera zaçu <69r> erregue bat datorrenean ciudade batera cembat gende atracen den aren icustera, aren baytan dauzquitela veren pensamentuac, eta desseo dutenarequi icusteco. Erraten dute «hara non datorren gure erreguea». Bada, arrazio gueyago da christioec[1059] dembora onetan dauzquiten veren pensamentuac ceruco erreguea baytan, ceyn baytator cerutic gure amoreagatic eta gure onetan aldarera, ambat ayngueruec acompañacen, adoracen eta alabacen dutela.

Bereala meza erralleac abisacen ditu guciec graciac eman drazquioten Iaunari arenganic errecebicen ditugun ondasunengatic. Horduan, respondacen

---

[1056] harc] jat. *hare* jartzen duela dirudi, huts tipografikoa da.
[1057] oracio onetan] jat. *oracionetan*.
[1058] Jatorrizkoan *(.?.)* dago paragrafoaren azpian.
[1059] christioec] jat. *christioac*. Hutsen zerrendan zuzendua.

diote «arrazio eta justo da» eta, bereala, harc, Elizaco ministroac bezala, gucien partes assicen da graciac ematen, eta erraten duela «*dignum & iustum est*. Justo eta arrazio da, eta provechu andiac dacazquiena beti eta non nay, dembora gucietan, eta lecu gucietan.» Graciac <69v> eman drazquiogun, nola eguiten baytute ayngueruec eta ayequi batean erraten du «*sanctus, sanctus, sanctus, dominus deus Sabahot*». Ala eguin bear dute meza ençuten dutenec, erraten dutela, «sandua, sandua, sandua zarade, Iaungoycoa verdaderoa, Ayta eta Semea eta Espiritu Sandua bedeycatua da Iaunaren icenean datorrena». Hitz ohec erran bear dirade oroycen dela nola Christo gure iaunac nay duen etorri cerutic aldarera, sacramentu sandura, nay duten guciec ofreci dezaten vere ayta eternoari, graciac ematen dizquiotela vere etorceagatic eta otoytz eguin eman drazquigun vere vician eta heriotcean meregitu cizquigun ondasunac eta digun gracia, gueuren partetic aparejaceco ambat ondasun errecebiceco.

Meza erraten duenac assicen denean erraten «*te igitur clementissime pater*», otoytz eguiten diola ayta eternoari <70r> urricariosoa den bezala, errecebi dezan sacrificioa gucien partes ofrecitu nay duena christio fielen aldetic den beçambates, guciey aprovecha[1060] daquioqueten bezala, eta guero egoten bayta secretuan otoytz eguiten diola Iaungoycoari[1061] viciengatic. Dembora onetan meza ençuten duenac bear du vere partetic sacerdotearequi batean ofrecitu sacrificioa, baya hau ongui eguiteco jaquin bear da lembicicoric ece meza erralleac Elizaren icenean ofrecicen duela mezaco sacrificioa christio fiel vici diranengatic eta purgatorioan dauden arimen favoretan. Eta meza erraten duenarequi batean ofrecicen dute sacrificio hura vera meza ençuten duten guciec. Bigarren jaquin bear dena da cer intenciorequi bear den ofratu. Irurgarrena, nola bear den ofratu intencios den bezanbates. Eramo bear du Christo gure iaunac Orcillare Sanduan gurutce <70v> sanduan ofrecitu cenean eramo çuena, izandu baycen vere ayta eternoari contentu emateagatic cioayenean, bada, gurutzean ofrecicera, cio, vere viotcean, «ni ofrecicen naiz çuri contentu emateagatic, eta ene heriotcetic ezpalidi atra berce provechuric baycic çuri contentu ematea eta çure vorondatea eguitea». Manera onetan verean ofrecituco ninza oray ofrecicen naycen bezala.

Bigarren intencio Christo gure iaunac eramo çuena joan cenean Calvarioco oyanera mundu guciagatic ofrecicera içandu cen graciac emateagatic vere ayta eternoari guciey eguiten dizquioten ondasunes, ceñen baytatic iturri batetic bezala baytatoz guciac, ala ayngueruey nola guiçoney eta creatura guciey eguiten dizquiotenac. Eta jaquinica gure gucien baytan eta aynguiruetan eztela caudaleric conveni ciraden graciac iaun oni emateco, nay <71r> cituen faltac cumplitu eta, ala, guciengatic eman eta gucien partes alabatu. Eta ala cio vere viotcean Iesu Christoc: «Ene Ayta eternoa nic ofrecicen drauzut sacrificio hau guciey eguin dizquiotezun eta eguinen dizquiotezun ondasun eta merchedengatic. Eta gucien partes alabacen çaytut». Argatic deycen da sacrificio hau alabançasco sacrificioa.

---

1060 aprovecha] jat. *apravecha*.

1061 Iaungoycoari] jat. *Iaungoycari*. Hutsen zerrendan zuzendua.

Irurgarren intencioa gure Iaunac eramo çuena gurutzean ofrecicera joan cenean, izandu cen guc gure becatuengatic zor guinduen zor gucias vere ayta pagaceagatic, eta aren medios guciac barca cizan. Eta ala cio gurutzera cioayenean ofrecicera vere viotcean: «Ene ayta eternoa, nic ofrecicen drauzquizut neure trabaju guciac, neure odola, baytaquiçu cembat balio duen, eta neure vicia, ene amoreacatic barca drazquioteçun becatariey, veren becatuac eta ayengatic çor çaytuzten[1062] çor gucies paga <71v> çaytecen». Eta hau izandu cela Iaun onen intencioa, veronec adicera eman cigu, erraten çuela caliza consagratu çuenean «Hau da ene caliza, ene odolarena, ixurico bayta çuengatic eta aunizengatic, ceren onen medios ene ayta urricaritu bayta becataries eta barcatu baytizquiote veren becatu guciac».

Laugarren intencioa Christo gure iaunac eramo çuena joan cenean gurutzean ofrecicera izandu cen guri meregiceagatic Espiritu Sandua, ceñen favorea eta gracia bague ecin iolaco maneras erdesi baytezaquegu gloriaco vicice seculacoa, beñere acabatuco eztena. Eta Iaun onec içandu çuela intencio hau verac erran izandu cioten vere apostuloey «conveni da, ni noayen neure aytarengana», da erratea, «combeni da ni il nadin, ceren ni ezpanoaye neure aytagana, ezta etorrico Espiritu Sandua çuengana, baya ni banoaye, nic igorrico drauçuet».<72r>

Laur gauza ohec eramo bear dituzte christio fielec mezan ofrecicen den sacrificioa ofracen dutenean. Lembicicoa, desseo andi bat Iaungoycoa agradaceco gauza batean ceñes ambat contentu errecebitu baytu nola mezan ofrecicen den sacrificioa[1063] ofreciceas, bayta vere seme onericiaren gorpuza eta odola, ceyn gueyago agradacen bayzayo eces berce gauza guciac.

Bigarren intencioa eramo bear dena da Iaungoycoari graciac emateco verac eta bercec arenganic errecebitu dituzten ondasunengatic.

Irurgarren intencioa eramo bear duena da, ofrecicea mezan ofrecicen den sacrificioa vere eta bercen becatuengatic, aren medios barca drazquioten.

Laugarren intencioa da Iesu Christoren medios eman drazoten Espiritu Sanduaren gracia eta libra dizan <72v> Iaungoycoac gayz gucietaric, passatuetatic eta presentean diradenetatic eta etorceco daudenetatic. Eta eman drazquioten gauza ayec guciac aren honraco eta cerviçuco diradenac eta veren onetan, eta berce proximo lagunendaco, vici diradenen eta purgatorioan[1064] dauden arimendaco.

Alaver, meza ençuten duenac eguin bear du contu nola ala bayta eguia ece mezan ofrecicen den sacrificioa dela meza ençuten duenarena, alas eta Iaungoycoac ematen dionean vere meregitu cituen tesoro eta ondasun guciequi, ceren veretaco etcituen bear. Eta, ala, Elizac cantacen du guregatic jayo cela eta guretaco, eta gure ondasuna eta provechuagatic eman ciçaygula Iesu Christo munduaren salvazallea. Bada, gauza ciertoa da ayn dela gurea gracias ematen çaygun gauza nola guc gueuren trabajus erdesten duguna. Ala, bada, meza ençuten duenac bear du vere baytan consideratu eta pensatu «Iesu <73r> Christo, ceyn

---

[1062] çaytuzten] jat. *caytuzten*.
[1063] sacrificioa] jat. *sacrifiocioa*.
[1064] purgatorioan] jat. *purgatorian*.

ofrecicen baytut, da enea. Eneac dirade munduan ibildu cenean eguin cituen pausu guciac, sufritu cituen afrontuac eta injuriac. Enea da odola ixuri çuen gucia. Eneac dirade doloreac eta trabajuac, gurutzean itzees atrabesaturic cegoenean sufritu cituenac, eta vere vician eta eriotzean eguin eta passatu cituen trabajuac. Ceyn abaratzic dagon meza ençuten duena, baldin aprovechacen badaqui». Hau onla consideracea auniz importacen da, esperança eta confiança andiarequin escaceco Iaungoycoari[1065] merchede andiac, ala animaren nola gorpuçarendaco, ceren gauza ohec[1066] bayño, gueyago valio baytu ofrecicen dion sacrificioac. Gauza ohec onla consideraturic meza ençuten duenac bear du ofratu sacrificioa, manera onetan,[1067] sacerdotearequi batean.

Iaungoyco eguiascoa sacrificio sandua meza erralleac ofrecicen drauçuna, bayta Iesu Christo gure Iaunaren <73v> gorpuza eta aren odol sandua: «Nic, neure partetic, arequi batean ofrecicen drauçut meregitu dizquigun ondasun guciequi, confessacen dudala çu çaradela Iaungoyco verdaderoa, gucien Iauna, eta guciey ondasun eguillea. Lembicicoric ofrecicen drauçut çuri contentu emateagatic eta, guero, graciac emateagatic Iesu Christori eguin dizquioçun[1068] merchedengatic eta oray ceruan eguiten dizquioçunengatic, eta ceren gure amoreagatic igorri baycinduen mundura guiçon eguin cedin. Graciac ematen drauzquiçut aren guiçon eguiteagatic eta iayoceagatic virgina Mariaren baytaric, bere vician eguin cituen ondasunengatic, ceren ordenatu bayçuen sacramentu eta sacrificio au, eta berce sacramentuac, passio eta heriotze dolorescoa, guciengatic passatu çuenagatic, aren irurgarren egunean illetaric resucitaceagatic, eta Espiritu Sandua apostoluetara etorceagatic. Alaver, ofrecicen drauçut andre <74r> dona Maria Virginari, aren amari, eguin dizquioçunengatic eta, oray, ceruan eguiten dizquiozunengatic; eta ene ayngueru beguiracen nauhenari eta berce ayngueruey eguin dizquioteçunengatic,[1069] eta ene sandu icenquideari, eta berce sandu eta sanda guciey, eta niri eguin dizquidaçunengatic, ceren criatu bayninduçu ceure irudira, eta ceren conservatu baynauçu ambat demboras eta oray presente onetan, eta ceren criatu baynauçu christioen artean eta eguin christioa, eta berce ondasun eguin dizquidaçun guciengatic, eta ene gurasoey, aydey, adisquidey eta ondasun eguiley eta guciey eguin dizquioteçunengatic. Ofrecicen drauçut, Iesu Christo, gure salvaçallea, harc dizquiçun ene eta gucien[1070] partes eta guciengatic alaba çayçan». Daquiela ciertoquiro meza ençuten duenac ece onetan gastacen duen dembora dela ongui empleatua, ceren hau da dembora proprioa gracian Iaungoycoari[1071] emateco eta auniz agradacen çayona, ceren <74v> ofrecicen baytiogu Iesu Christo, valio baytu ondasun errecebicen ditugunac bayño gueyago. Argatic deycen da sacrificio au graciac ematecoa.

---

1065 Iaungoycoari] jat. *Iuãgoycoari*.
1066 ohec] jat. *ohoc*. Idazlearen *usus scribendi*-a ezaguturik, zuzentzea erabaki dugu.
1067 onetan] jat. *enetan*.
1068 dizquioçun] jat. *cindizquioçun*. Hutsen zerrendan zuzendua.
1069 dizquioteçunengatic] jat *dizquioteçunengatit*.
1070 gucien] jat *gocien*.
1071 Iaungoycoari] jat. *Iuangoycori*.

«Alaver ofrecicen drauçut, Iauna, sacrificio au. Onen medios urricari çaquizquidan eta barca drazquidaçun neure becatu guciac, eta ayengatic çor zaytudan çorras paga çaytecen. Onetaco ofrecicen drausquiçut Iesu Christorenac, pausuac mundu onetan cebillenean eguin cituenac ambat aldis enoyaturic; aren oracioac, trabajuac eta doloreac, vere passioan passatu eta sufritu cituenac oñetan eta escuetan, enegatic errecebitu cituen çauriac, odol gucia enegatic ixuri çuena, eta heriocea enegatic passatu çuena. Ohec gucioc dirade eneac. Eta, ala, ofracen drauzquiçut. Badaquit, Iauna, auniz çor çaytudala, ceren eguin baytut becatu auniz eta andiac. Eta, ala, confessacen dut çorra dela andia. Dut damu neure viotzean, neure falta eguines, ceren <75r> baytira çure contra. Daucat proposito eta intencio ez gueyagoric çure contra becaturic eguiteco, iolaco maneras. Bada, Iauna, paga çaytez Iesu Christoren meregimentuetan, ece da caudale eta hazienda ene becatu eta mundu gucico becatuengatic çor çaradenen pagaceco, eta sobracen da gueyago eta gueyago.» Hau erraten dela fede andiarequi eta humildaderequi, eta Iaungoycoari graciac ematen dizquiola, sentituco du bere vaytan consuelo andia, eta animatuco da esperança andiarequi escacera merchede andiac, erraten duela: «Alaver, ofrecicen drauçut, Ayta eternoa, sacrificio au, onen medios didaçun gueyen bear dudana, bayta Espiritu Sanduaren gracia eta aren doayac[1072] viciceco çuc nay duçun beçala. Indaçu fedea, esperança eta caridadea eta berce virtuteac eta ondasunac, çuri agradacen çayzquiçun guciac. Indaçu, Iauna, favore eta gracia neure vician eta heriotzean beti <75v> çuc nay duçun beçala viciceco eta ilceco, eta neure arimaren, etsayen, munduaren, araguiaren eta demonioaren contra beti vitoriarequi atraceco. Indaçu, alaver, Iauna, osasuna, hazienda eta contentu eta mundu onetaco berce ondasunac çure honraco eta cerviçuco[1073] eta ene arimaren onetan diradenac.

Alaver, otoyz eguiten drauçut urricari çaytecen ceure Eliças, christio fieles, ceynen burua bayta Ayta Sandua, ceynec governacen baytitu, conserva dezaçun eta barraya dedin mundu gucian eta libra dezaçun gayz gucietaric. Eta Ayta Sanduari emoçu favore eta gracia ongui Eliza governaceco eta vere oficioa ongui eguiteco. Eta, alaver, verce aren manuaren azpian dauden perladoey[1074] eta edoceyni, baytu cargu eta cuidado arimen salvacioas, acerta deçaten norc vere aurquincean, cargua eta obligacioa duten bezala ongui eguiteco. <76r>

Alaver, otoyz eguiten drauçut gure erreguerengatic den çure cerviçaria eguin deçan çure gogara, eta cerviza çayzan[1075] ongui, eta governa diçan vere erreynuac ongui. Alaver, berce principe christio diraden guciec, eta den ayhen artean baquea, eta concordia çuc nay duçuna bayta eguiascoa. Eta eman drazoteçun vitoria Elizaco etsayen contra.

---

1072 doayac] jat. *doayec*. Hutsen zerrendan zuzendua.
1073 cerviçuco jat. *seruiçuco*. Hutsen zerrendan zuzendua.
1074 perladoey] beharbada *preladoey* behar luke.
1075 çayzan] jat. *çanyzan*. Duplografia dirudi, amaierako <n>-k eraginda.

Alaver, otoytz eguiten drauçut iuezec[1076] eta republica governacen dutenec eguin dezaten justicia, ongui arracioaren conforme oficioa eta cargu duten bezala.

Alaver, ofrecicen drauçut ene ayta eta amagatic, ayden, adisquiden eta ondasun eguillengatic, barca drazquioteçun veren becatuac eta eguin didaçun çeure cerviçariac hondasun guzian medracen dituçula, eta çure borondatea denean dramazquiçun gloriara.

Alaver, otoyz eguiten drauçut iduqui <76v> dezaçun misericordia eta urricari çaytecen becatu mortalean daudenes. Ecar itzaçu[1077] eçagumentura ceyn peligro andian dauden ifernura juateco, eta eguin deçaten penitencia apartacen diradela becatuetatic, eta cerviça çayçaten.

Alaver, urricari çaytes federic eztutenes eta hereges. Eman drazoteçu arguitasuna ezagun dizaten gure fedesco misterioac eta eçagun deçaten nola doacen engañaturic, eta, ala, converti ditecen gure leguera. Eta sinesta deçaten Eliza sandu Erromacoac sinestatzen duen fede eguiascoa eta verdaderoa, eta eguin deçaten penitencia veren becatues, eta, ala, salva ditecen. Gauza ohec[1078] gucioc, otoyz eguiten drauçut, disquiguçun Iesu Christo çure seme bacoyçaren eta gure salvaçallearen eta Iaungoycoaren amoreacatic, ceyn ofrecicen baytrauçut, ceynec otoyz eguiten baytrauçu, ene partes. Badaquit, Iauna, beti ençuten duçula <77r> vere otoytzetan denarengatic eta meregi duenagatic. Eta, ala, daucat esperança çure misericordian eta ondasunean nic ez meregiagatic ofrecicen diçudan Iaunaren medios, emanen didaçula escacen diçudan gucia». Gauza ohec eta berce conveni çayon gucia bear du escatu mezan, fede eta esperança andiarequi, ceren bayta dembora gucietatic oberena Iaungoycoarequi negociaceco ofrecicen çayon sacrificioaren medios.

Contacen du Escritura Sagratuac nola patriarca Abrahanec vorondate solla iduquitu çuenagatic ofreciceco sacrificioan vere semea Iaungoycoaren vorondatearequi cumpliceagatic, eguin ciola ambat ofrecimentu juramenturequi prometacen ciola eguinen ciola ari eta aren ondorecoey gucis merchede andia. Bada, cer escatuco diogu Iaungoycoari ofracen diogunean ofrenda bat ayn ona eta ambat valio duena eta ambat agradacen çayona nola bayta <77v> Iesu Christoren gorpuça eta odola, alas eta Iaun onec veronec guregatic otoyz eguiten dionean vere aytari aren amoreacatic eman draçagun escacen dioguna, ezpaytigu emanen? Arraciorequi erran deçaquegu San Pabloc diona: vere semea ematen draugunac[1079] nola hucatuco digu escacen dioguna?

Sacrificio au manera onetan ofrecicea meza ençuten duenac eguin dezaque sacerdoteac escuac juntaturic egoten denean otoytz eguiten duela vici diraden christioengatic, ariqueta hostia consagratu arteraño.

---

1076 iuezec] jat. *iuezen*. Hutsa dirudi, hori dela eta zuzentzea erabaki dugu.

1077 Ecar itzaçu] jat. *Ecarritzaçu*. Beharbada, *Ecarri tzaçu* ere irakuri liteke singularreko adizkiek duten aferesiarekin.

1078 ohec] jat. *ehec*. Idazlearen *usus scribendi*-a ezaguturik, zuzentzea erabaki da. Edonola ere, *ebek* formaren aitzindari izan daiteke.

1079 draugunac] jat. *drauganac*.

<86v> **Çaspigarren capituloa**

**Cer eguin bear duen meza ençuten duenac hostia eta caliza consagratu, eta ariqueta meza erraten duenac Iesu Christoren gorpuza eta odola errecebitu arteraño**

Sacerdoteac, nola consagratus guero hostia eta calizan cegon ardoa baytauca bere escuetan Iesu Christo munduaren salvaçallea, goyticen du gora ala hostia nola caliza. Ceren meza ençuten dutenec, icusi eta adora dezaten eta alabatu, dembora onetan asi eta ariqueta meza erraten duenac errecebitu arteraño Iesu Christoren gorpuza eta odola. Meza ençuten duenac bear du Iaun au adoratu eta alabatu eta obratan eçarri fedea, esperança eta caridadea eta escatu conveni çayon gucia salvaceco. Meza erraten duenac <87r> alchacen duenean hostia consagratua eta caliza, meza ençuten duenac bear du oroytu eta consideratu nola Iesu Christo, hostia artan eta calizan dagona, Horcillare Sanduan oñetan eta escuetan gurutzean itzees jossi eta alchatu çuten gora Calvarioco oyanean, non ixuri bayçuen bere odola gure salvaceagatic. Oneças oroyturic bear du Iaun au adoratu eta obratan eçarri fedea, esperança eta caridadea. Baya hau eguin dedin bear den beçala, bear da jaquin ece eguiten dutela gayzqui sacerdoteac arcen duen beçala hostia consagraceco eta, bereala, escuac alchacen dituztenec gora eta asicen dirade escues bularretan golpeac ematen irudiric han dagola Iesu Christo. Eztituzte gauza ohec eguin bear ayn fite. Eta arrazioa da ceren hostia, ariqueta sacerdoteac acabatu arteraño consagracioco itzac, da oguia; eta calizan dagona ardoa. Eta eztirade adoratu bear, baya meza erraten duenac acabacen <87v> dituen beçala erranes consagracioco itzac,[1080] hostia artan ezta oguiric eta ez calizan ardoric, baycic Iesu Cristoren gorpuza eta odola. Eta orduan bear da adoratu. Baya, nola meza ençuten duenac ezpaytaqui noyz sacerdoteac acabacen dituen consagracioco itzac, iduqui bear da contu eta jaquin ece sacerdoteac consagracioco itzac acabatu dituen beçala, nola baytauca Iesu Christo bere escuetan hostia consagratuan, bereala jarricen da belaurico eta chuticen da eta alchacen du hostia. Horduan bear du meza ençuten duenac adoratu hostia consagratua eta, alaver, caliza, ceren horduan ezta an oguiric eta ez ardoric, baycic Iesu Christoren gorpuça eta odola. Eta bear du obratan eçarri fedea, manera onetan erraten duela: «Nic sinestatzen dut çu çaradela Iesu Christo Iaungoycoaren semea, etorri bayçarade sacramentu sandu honetara, nic adoracen çaytut neure salvadorea eta alavacen, eta <88r> bedeycacen çaytut eta graciac ematen drauzquiçut, ceren baytaquit etorri çaradela desseorequi niri merchede andiac egitera eta ondasunes betecera. Emen presentacen nayz ni, becatari au, gayzqui eguina beçala çure aurrean, eguin deçaçun çuc, Iauna, enequi çaradenac beçala». Onequi batean bear du bereala obratan eçarri esperança, erraten duela: «Esperança daucat, iauna, çure baytan, ala eta çure etorcea içandu denean amorio enegana daucaçunagatic, urricaturico çaradela niças eta usatuco duçula enequi misericordias, eta barcatuco dizquidaçula neure becatu guciac, auniz eta andiac izanagatic, ce-

[1080] itzac] jat. *itzat*.

ren andiago bayta çure misericordia, orretan daucat neure confianza, eta ala eguinen duçula enequi çaradenac beçala, eta nic bear dudan beçala».

Alaver, bear du obratan eçarri caridadea, erraten duela «Çu, ene Iaungoycoa eta salvaçallea, ceñenganic baytatozquit <88v> ondasun guciac eta eman baycinduen ceure vicia ene amoreagatic, neure viotzas eta entraña gucies[1081] onereciric çaytut. Eta, onetan, neure dembora neure faltas faltatu dudanas dut damu, ceren eguin baytut çure contra eta ceren ene becatuac içandu baytirade causa çu, Iauna, gayzqui trata cinçaten, menospreciatu eta gurutzean itzees atravesatu, ceñetan il nay içandu baycinduen niri vicia emateagatic. Otoy, barca draçadaçu çaradenagatic. Eta aurrera indaçu favore eta gracia emenda nadin. Daucat intencio eta proposito ala eguiteco, apartacen naycela çure amoreagatic, becatuetatic eta ayen ocasioetatic. Eta emendic aurrera nay çaytut onerici eta serviçatu arrazio den beçala, çure amoriotic beñerere apartatu bague. Eta, ala, desseacen dut guciec onerici çayçaten eta cerviçatu. Eta otoytz eguiten drauçut, Iauna, çure odol enegatic ixuri cinduenas, borra eta deseguin <89r>[1082] dezaçun demonioac ene contra daucan escritura, nic çuri eman bear diçudan contua juyzioan, pensamentues, itzes eta obres, neure demboran çure contra eguin ditudan faltes çure aurrean acusaceco, eta aytzina çure favorearequi vici nadin, çure cerviçuan, alaco maneras çure vorondatearequi beti conformacen naycela, ece ene heriotzeco horduan ezpaytuque deuserere ni cerzas acusatu». Hau onla eguitea da provechu anditaco gauza, ceren da comecacea espiritualquiro; erran nay baytu desseos eta vorondates errecebicea[1083] Iesu Christo vere entrañetan, fedearen, esperançaren eta caridadearen medios. Eta hau[1084] onla eguiten duela, izanen du parte sacramentu sanduaren provechu eta ondasunetan, nola baytio Santo Thomasec. Ceren nola Christo gure iauna munduan cebillenean batzutan sendatzen cituen heriac sarcen cela ayen echetan, nola sartu cenean Simonen echean <89v> zegolaric aren amaguiarrava minequi, sendatu çuen. Berce baçuetan sendacen cituen herien echetan sartu bague, nola sendatu bayçuen centurioaren mutilla; icusiric aren fedea erraten ciola itzes «Ohaye, eguin bedi sinestatu duan bezala». Eta, ala, guelditu cen sendaturic. Ala, bada, aldareco sacramentuan dagola gure iauna eta salvazallea remedia ditzaque gure nesessidade guciac sinestatcen dugula eta daucagula confiança iaun onen baytan, eta onen favorearequi aparejacen garadela. Manera bates da ece comecacen garadenean, errecebicen baytugu sacramentu sanduan sarcen dela gure entrañetan. Eta hau da maneraric oberena eta provechosoena guretaco, baya nola ezpaytute guciec egunoros errecebicen eta ez ayn mayz nola arrazio ballizate. Da berce manera bat, bayta desseos errecebicea iaun hau fedearen medios sinestacen dugula dagola Iesu Christo gure salvaçallea aldareco sacramentu sanduan <90r> eta daucagula confiança aren ondasunaren eta misericordia andiaren baytan, eta an dagola dela poderoso gure necessidade gucien erre-

1081 gucies] jat. *gucias*. Hutsen zerrendan zuzendua.

1082 <89r>] jat. 98. orrialdea dela jartzen du, inprentan kajistek egindako hutsa izan liteke.

1083 errecebicea] jat. *erecebicea.*

1084 hau] jat. *han*. <u> iraulita dago. Hutsen zerrendan zuzendua.

mediaceco, eta oneristen dugula gueuren iauna eta ondasun eguillea den bezala, eta desseacen dugula gueuren entrañetan sarcera eta errecebicera. Hau onla eguin dezaque meza ençuten duen horos, eta ala egunoros izanen du parte sacramentu sandu onen provechu eta ondasunetan, eta aprovechatuco da auniz comecacen garadenean sacramentu sandu au ongui errecebiceco.

Oray erran diraden gauza ohec eguin eta bear du meza ençuten duenac oroytu purgatorioan dauden arimes, eta ayengatic otoytz eguin, erraten duela: «Iauna, otoytz eguiten drauçut ene aytaren eta amaren, ayden, adisquiden eta ondasun eguillen eta berce purgatorioan dauden arimac libra ditzaçun purgatorioco pena eta <90v> trabajuetatic Iesu Christo gure iaunaren amoreacatic eta dramazquiçun gloriaco descansura».

Guero sacerdoteac erraten duenean «*pater noster*», alaver, meza ençuten duenac erran bez vere baytan, secretuan, estorva eztizan berce lagunac, erran bear du devocio eta erreverenciarequi. Argatic, Christo gure iaunac lembicico itzac oracio onetan ezarri cituen «Ayta gurea, ceruetan zaudena». Alcha deçagun gueuren pensamentua lurreco gauzetatic eta oroyt gaytecen eta considera dezagun minzacen garadela Iaungoycoarequi, bayta ceruco eta lurreco erreguea eta iauna, ceyn humildade andiarequi erreverenciacen, adoracen eta alavacen baytute ceruan ayngueru[1085] sanduec eta ango gauzac escacen dizquiogunean dauzquigun han gueuren pensamentuac. Eta gauza ohec esca drazquiogun confiança andiarequi emanen dizquigula. Nay du dey draçogun «ayta gurea», ceren edoceyn <91r> ondasun daucaque esperança humeac vere aytaganic erdiesico duela eta particularquiro ceruan dagonaganic, ceynec gueyago[1086] desseacen baytu gure ondasuna guc gueurec baño. Eta, ala, gueyago desseacen du guri ematea conveni çaygun gucia guc bayno.

Oracio onetan escacen diraden çazpi gauzetan sarcen dirade gauza bear ditugun guciac, ala arimaren nola gorpuzarendaco. Baya obequiago erdesteco conveni da oracio au erran dedin adicen duen lenguagean; bercela eztu jaquinen cer escacen duen. Nola latinic eztaquienac erran bales «*Pater noster qui es in caelis*», eta nola ezpaytu adicen cer erraten duen, ezta egonen ambat devociorequi nola egonen bayllizate adicen balu. Argatic, conveni da oracio au eta berceac erran ditecen adicen duen lengoagean.

Alaver, conveni da oracio onetan[1087] escacen diraden gauzac esca ditecen sines desseorequi erdesteco. Onetaco <91v> bear du itzes escacen duena nay vorondateas, ceren itzes escatuagatic baldin ezpadu ala nay vorondateas, eztu alacoac sines escacen, baycic cumplimentus eta burlas, nola ascoc onla escacen baytu. Onlacoec eztute erdetsico escacen dutena; aytzetic, castigatuco ditu, ceren ezpaytute sines escacen, eta hau ongui adiceco jaquin bear da nola.

Lembicico, escacen dioguna, Iaungoyco ayta gureari, ceruetan dagonari da «santifica bedi çure icen ori», erran nay dugula onetan, «Iauna, çaraden

---

[1085] ayngueru] jat. *ayngeru*. Hutsen zerrendan zuzendua.
[1086] gueyago] jat. *geyago*. Hutsen zerrendan zuzendua.
[1087] oracio onetan] jat. *oracionetan*.

çu gureganic honratu eta cervizatu arrazio den bezala». Nay eztuenac iaun hau honratu eta cervizatu, honlacoac eztu escacen sines, baycic cumplimentus eta burlas.

Bigarrena, escacen diogu «etorri bedi çure erreynua», erran nay dugula onetan «Iauna alas eta çu çaradenean gure erregue propioa governa gaytecen çure ordenanzen eta leguen conforme, <92r> eta eztela berce ordenanzaric eta legueric gure baytan». Hau erraten duenac itzes eta eztuenean ala eguiten dion bezala, baycic governacen da demonioac eta vere apetituec nay duten bezala, onlacoec eztute sines escacen.

Irurgarrena[1088] escacen dioguna da «eguin bedi çure vorondatea ceruan bezala lurrean here». Hau, honla, itzes erran eta, alabaya, dago determinaturic iaun onec vere mandamentuetan manaturic daucanaren contra eguitera, icusia dago onlacoac eztuela escacen sines, bayzic cumplimentus.

Laurgarrena, escacen diogu «gueuren egunorosco oguia eman drazaguçu egun», erran nay dugula onetan «Iauna, alas eta çu zaradenean gure ayta, eman drazaguçu bear dugun sustentua, particularquiro arimarena, bayta çure itza eta dotrina, çure predicazallec predicacen dutena eta doctorec eracusten dutena, ençuten ditugula predicuac <92v> eta libru devocioscoac eta onac leycen ditugula, eta mayz confessacen eta comecacen garadela, bayta arimaren sustentu propioa». Gauza ohec eguiten eztituenac, aytzetic, cuidado gutien duena da gauza hoes, onlacoac eztu sines escacen.

Borzgarrena escacen dioguna da «barca drazquiguçu gure çorrac, guc barcacen dizquiotegun bezala gure çorduney», escacen diogula onetan barca drazquigun gueuren becatuac eta daquigun cembat escacen diogun onetan. Iaquin bear da ece becatu mortale bat eguiten duenac, arengatic meregi dituela ifernuco penac. Bada, ezta gueyago cer erran, cembat balio duen emen escacen dioguna Iaungoycoari, alas eta eztenean gutiago, bayzic libra gayçan ifernuco sutic eta pena eta trabaju beynerere acabatuco eztiradenetatic. Bada, pena eta trabaju ayn andi ohetaric libracen gaytu Iaungoycoac becatu mortalea barcacen digunean. Alaver, <93r> escacen diogu barca drazquigun becatuengatic çor dugun pena, ceyn pagatu bear baytugu mundu onetan obra onac eta ondasunac eguines edo purgatorioan. Baya advertitu bear da ece erraten diogula «guc gure çorduney, barcacen dizquiotegun bezala». Onetan confessacen dugula guc barcacen diotegula injuriatu eta agraviatu gaytuzteney. Hau itzes onla erraten duenac eta an viotzean barrenean daucanac intencio ez barcaceco, aytzetic mendecaceco, onlacoac eztu sines escacen, aytzetic escacen du vere contra.

Seygarrena, escacen diogu «ezcaytzaçula utzi tentacioan erortera», otoytz eguiten diogula onetan «Iauna, garade flacoac eta etsayac ditugu bortiçac, dugu necessidade çure favorearendaco, libra gaytzaçu, bada, becatu gucietatic eta ayen ocasioetatic». Hau onla escacen duenac itzes eta, alabaya, baldin badavil nondic becatu eguinen duen, joaten dela ocasio ayetara, ceñetan baytaqui <93v> becatu eguinen duela, honlacoac eztu sines escacen.

[1088] Yrurgarena] jat. *Yrur garena*.

Çazpigarrena, escacen diogu «libra gayçaçu gaytzetic», onetan otoytz eguiten diogula libra gaytzan gayz gucietatic, ala arimarenetatic nola gorpuçarenetic, particularquiro becatu passatuetatic, barcacen dizquigula eta ematen digula vere favorea eta gracia ez gueyagoric ayetan erorceco. Eta, ala, libra gaytzan etorceco dauden gaytzetatic, particularquiro ifernuco penatic, ceren da gauza ciertoa ece becatuaren aldean mundu onetaco gaytzac ecin dey ditezquela gaytzac, ceren da ayn gauza gaystoa, particularquiro becatu mortalea, ece ayngueruac criaturican Iaungoycoac onac, becatu mortaleac eguin cituen gaystoac. Ambat ece gueros baytirade demonioac, ifernuan daudenac. Alaver, lembicico guiçona criaturican Iaungoycoac ona, becatuan erori eta harc eguin çuen gaystoa. Becatua eguiten duenac eguiten dio agravio vere <94r> criatu çuen iaunari, bayta gayz gucietatic gaystoena. Da ayn gaystoa, ece andic gu libracera costa ciçayo Christo gure iaunari vere vicia, eta eguiten duenac crucificacen du. Da ayn gaystoa becatu mortalea, ece ilcen baytu eguiten duenaren arima. Eta alacoa da Iaungoycoaren essaya, eta galcen du vere partetic den becambates[1089] ceruco gloria. Eta artan dagola ilcen dena, gueldicen da obligaturic ifernuco suan errececo, beynerere remedioric bague. Bada, gaytz ayn andi onetatic, particularquiro, escacen diogu Iaungoycoari[1090] libra gaytzan. Bada, hau eta berce gauzac oracio onetan escacen dizquiogunac, eztirade escatu bear cumplimentus eta burlas, baycic sines itzac erraten ditugun beçala; ala nay dugula vorondates, ece honla escacen diogula, da gauza ciertoa emanen dizquigula gure ayta misericordias beteric dagonac, ceren escacen baytizquiogu Christo gure iaunac ordenaturic dauzquien <94v> eta erran cituen gauzac, eta nay duela oray, guc ayec verac esca diçagun. Eta guri obequiago eman drazquigun verac mezan gure partes escacen dizquio vere aytari.

Sacerdoteac erraten duenean «*Agnus dei qui tollis peccata mundi miserere nobis*» bi aldis eta beyn «*Dona nobis pacem*», horduan meza ençuten duenac erran bear du «Nic sinestacen dut Iesu Christo ene iauna, gurutzean ofrecitu cinanean munduco becatuengatic, aplacatu cinduela ceure ayta eta baqueac eguin cinducela, aren eta gure artean. Eta horduan cinduen condicioa axuriarena, duçula oray aldareco sacramentuan çaudela, bayta manso izatea eta sufricea. Atrevi gaytecen escacera misericordia eta baquea». Hau gure gauza gucietan bear dugu galdeguin, particularquiro çu errecebitu bear çaytuenac: «Nola nic desseacen baytut çu neure entrañetan sarcera, bada, Iauna, iducaçu misericordia guzas, <95r> barcacen eta guencen dituçula gureganic gure becatuac, ece honla izanen dugu baquea, ambat conveni çayguna, çurequi».

Meza erralleac erraten duenean «*Domine, non sum dignus*. Iauna, ez nayz digno». Alaver, meza ençuten duenac erran bear du comecaceco, erran den bezala, desseos erraten duela «Iauna, nic nay nuque iduqui sanduec duten garvitasuna[1091] çure errecebiceco neure entrañetan, baya oray ez nayz trebe,

---

[1089] becambates] obra honetan agertzen den herskaridun aldaera bakarra da, gainerakoetan beti txistukari bizkarkaria baitakar; beraz, inprentako hutsa izan liteke. Hala ere, dotrinan gehiagotan agertzen denez, hala uztea erabaki dugu.

[1090] Iaungoycoari] jat. *Iaungoycoaria*. Hutsen zerrendan zuzendua.

[1091] garvitasuna] jat. *garuitasnua*. Hutsen zerrendan zuzendua.

ceren senti baytut neure baytan eztudala arrazio den garvitasuna eta aparejua çure magestadearen errecebiceco, baya, çure favorearequi, aparejatuco nayz onlaco egunetaco. Oray contentacen nayz desseo ematen didaçun onequi. Eta onetaco here ezagucen dut ez nayzela digno, baya confessacen dut sacramentu sandu orretan çaudela, çaradela poderoso ene arima onen sendaceco eta ondasun bear dudan gucia emateco, nola munduan <95v> cenbilçanean sendatu baycinduen centurioaren mutila aren echean sartu bague. Argatic, otoytz eguiten drauçut ene salvaçallea eta Iauna, daucaçun nizas cuidado governacen nayçula çure leguearen eta ordenanzen conformera, defendacen nayçula eta libracen gaytz gucietatic, eta remediacen nayçula neure necessidade eta gauza gucietan, ematen didaçula favore eta gracia beti vician eta heriotzean contenta çaytzadan, Iauna».

<97r> **Çorzigarren[1092] capituloa**

**Cer eguin bear duen meza ençuten duenac meza erraten duenac Iesu Christoren gorpuza eta odola errecibitu eta azqueneraño**

Sacerdoteac azqueneco oracioac erraten dituenean, meza ençuten <97v> duenac escatu bear dio Iaungoycoari harc escacen diona, erraten duela «Iauna, meza erraten duenac escacen diçuna, nic neure partetic otoytz eguiten drauçut eman drazaguçun Iesu Christo gure iaunaren medios».

Guero erraten du «*Ite missa est*» edo «*Benedicamus domino*». Horduan, meza ençuten duenac bear du Iaungoycoa alabatu. Eta egozten duenean sacerdoteac bedeycioa erraten duela «Iaungoyco aytaren eta Semearen eta Espiritu Sanduaren bedeycioa jaytzi dedila çuengana, eta gueldi dedila beti». Bear du errecebitu humildaderequi eta contenturequi oroytzen dela Iesu Christoc juyzioan egotzico duen bedeycioas oney, aren mandamentuac beguiratu dituzteney eta obra misericordiascoac eguin dituzteney eta aren mandamentuac beguiratu eztituzteney egotzico dioten maldicioas. Eta onesas oroyturic, otoytz eguin braço, erraten duela: «Iauna, bedeycioa, meza erran duenac <98r> eman didan au, çure icenean gueldi bedi enequi, eta vici nadin ni çure cerviçuan çuc nay duçun bezala alaco maneras, ece nic ez meregiagatic dudan parte, çuc juyzioan ceure escogituey eta cerviçariey egotzico dioteçunean. Ala dela, çaradenagatic ene iauna eta salvaçallea». Eta eztedila[1093] ior ere atra mezatic bedeycioa errecebitu bague. Onetan da costumbre gucis gaystoa auniz lecutan atracen baytirade mezatic sacramentu sandua alchatu eta bereala, eta berce baçuetan ez ayn fite atragatic, baya bay sacerdoteac Iesu Christoren gorpuza eta odola errecebitu eta bereala. Hau claro da dela gayzqui. Ceren Eliza sanduac manacen du guciec ençun dezaten meza ossoric, ariqueta bedeycioa egoci arterayno. Bay eta arrazio da eztitecen atra ariqueta Iuandone Iuaniseen evangelioa, azquenean leycen dena, ençun arterayno, ceren onetaco nay du Eliza ama sanduac erran dedin. Eta ditu provechu andiac <98v> evangelio sandu au ençuteac edoceyn peligro eta gaytzetatic libraceco, nola guero

[1092] Çorzigarren] jat. *Corzigarren.*

[1093] eztedila] jat. *eztidedila*. Duplografia dirudi.

erranen bayta, ceren evangelio sandu onetan ematen zaygu adicera nola Iaungoycoaren semea eguin cen guiçon guciendaco, berria ayn dichosoa eta provechosoa eta munduan cebillenean gure onetan eguin çuen oficioa, izandu baycen arguitasuna ematea eta eracustea guciey ceruco videa eta fuerça, eta podore ematea demonioaren eta berce essayen contra victoriarequi atraceco eta Iaungoycoaren semeac izateco, aren graciaren medios.

Meza ençuten duenac bear du acaba dedinean meza Iaungoycoari graciac eman, ezpada arte guti bates baycic here eguin dion merchedeas, ceren egun artan aurquendu bayta mezan eta artan ençun baytitu gure onetan Christo gure iaunac vere vician eta heriotzean eguin cituen obrac eta misterioac.

<106v> **Bedracigarren capituloa**

**Cembat eta ceyn andiac diraden meza ongui ençutetic atracen diraden provechuac**

Dirade auniz eta gucis andiac meza ongui ençuten duenac atracen dituen provechuac, ceren da gauza ciertoa ece devocio gucietatic confessaceas eta comecaceas landara, oberena dela meza ongui ençutea justoen eta Iaungoycoaren cervizari diradenendaco. Dago claro ceren eguia da ece gracian daudenec obra on bat eguiten duten horos erdesten dutela gracia leen çuten bayno gueyago, baya gueyago erdesten dute meza ongui ençuten dutenean. Batas ceren verac mezan ofrecicen baytu sacrificioa, berceas meza erraten duenac ofrecicen baytu arengatic. Alaver, Iaungoycoaren <107r> gracian dagonac obra on bat eguiten duen horos, erdesten du barcamentua vere becatuengatic çor çuena, eguiten duen ondasunaren conforme gutiago edo gueyago, baya gueyago erdesten du meza ongui ençuteagatic, nola bercela erranen bayta.

Bay eta becatariarendaco becatuetatic atraceco eta ambat peligro eta trabaju becatuen causas dituenetatic libraceco, gauzaric oberena da meza ongui ençutea. Eta arracioa da ceren becatariac bearren duena becatuetatic atraceco da Iaungoycoa urricari dedin arças, usacen duela vere misericordia andias eta dacarren urriquimentu eta damu bear duena vere becatues izatera. Eta, ala, barca drazquion becatuac eta demon vere gracia onetaco. Bada, medioric oberena da meza ongui ençutea, ceren gauza ciertoa da ece gauza ceñes fiteago eta gueyago Iaungoycoa urricaricen bayta, dela Christo gure iaunaren medios, ceyn ofrecicen <107v> baytio meza ençuten duenac vere meregitu cisquigun ondasun guciequi, guciac baytauzqui aldareco sacramentuan gure onetan. Eta, ala, guregatic passatu cituen trabajuac eta ixuri çuen odol gucia daude oyus Iaungoycoari urricari dedin becatarias, ussacen duela misericordias. Eta, ala, barca drazquion becatuac eta hau obequiago eguin dezan iaun hau verau dago otoytz eguiten diola vere aytari mezacoan, eta ofrecicen diola vere gorpuza eta odola. Argatic, becataria, nay baduçu becatuetatic atra eta Iaungoycoac barca drazquiçun eta diçun vere gracia eta favorea, confessio bat ongui eguiteco çoas meza ençutera eta ofreci draçoçu an ofrecicen den sacrificioa eta esca draçoçu, damu eta urriquimentu duçula aren contra eguin dituçun becatu gucies, desseorequi eta inteciorequi sines emendaceco beca-

tuetatic, eta ayen ocasioetatic apartacen zaradela eta aurrera aren <108r> cerviçuan viciceco aren vorondatearequi gauza gucietan conformacen çaradela, iaun onec nay duena eguiten duçula, urricari daquiçun eta barca drazquiçun ceure becatuac, Iesu Christoren amoreacatic. Hau bear den bezala eguiten duçula da gauza ciertoa barcatu dizquiçula ceure becatu guciac. Ceren Iesu Christoc çuregatic otoytz eguiten dio vere aytari barca drazquiçun. Eta, ala, aren partetic eztate faltaric, çuretic ezpada. Alaver, berce sacramentuac ongui errecebiceco laguncen da auniz meza ongui ençutea. Alaver, guc becatuengatic çor dugun penaren Iaungoycoa pagaceco ezta paguric ayn ciertoric eta seguroric eta gueyago balio duenic, nola bayta ofrecicea mezan ofrecicen den sacrifizioa, bayta Iesu Christo, vere obra eta ondasun guregatic vere vician eta heriotzean eguin cituenequi, balio baytute mundu gucian çor duten bayño gueyago eta gueyago comparacioric bague. Eta, ala, meza <108v> ongui ençuten duen egunean gueyago pagacen du eces barucen den egunean edo diciplinacen denean edo berce honlaco obrac eguiten dituen egunean, ceren mezacoan nola ofrecicen baytiogu Iaungoycoari Iesu Christo, ematen zayzquigu[1094] harc meregitu cizquigun ondasunac, paga dezagun çor duguna gueuren becatuengatic. Eta oequi batean juntacen ditugu guc gueuren partes eguiten ditugun ondasunac. Hau onla izanic, alas eta egun horos erorcen garadenean becatuetan eta, ala, çorraren azpian, cer da gauza oberic joatea baño mezara eta an ayetatic libracea?

Bada, erdesteco Iaungoycoarenganic gueyen importacen çayguna, bayta Espiritu Sanduaren gracia ongui viciceco eta heriotze on bat izateco eta onetaco bear diraden ondasunac erdesteco eta Iaungoycoaren serviçuan obetus joateco, sacramentu sanduac errecebiceas landara, gauzaric oberena <109r> da meza ongui ençutea eta an escacea dizquigun Ayta Eternoac Iesu Christo vere seme onericiaren amoreacatic.

Alaver, arimac purgatorioan daudenac socorraceco, Iaungoycoac libra dizan ango pena eta trabaju andi ayetatic, da gauza ciertoa ece meza errateas edo erran eraciceas landara, ayen favoretan medioric oberena dela meza ençutea eta an ofratu Iesu Christo ayen eta gure iauna ayta eternoari eta otoytz eguin ayec çor duten çorras paga dedin Iesu Christoc meregitu cisquigun ondasunetan eta libra diçan pena eta trabaju ayetatic.

Alaver, erdesteco Iaungoycoarenganic mundu onetan viciceco bear ditugun gauzac, ossasuna, hazienda eta berce gauzac, medioric oberena da meza ongui ençutea eta otoytz eguin eman drazquigun Iesu Christoren amoreacatic, on diraden bezala, bienaventurança erdesteco.<109v>

Bada, libraceco ambat peligro eta gaycetatic eta tentacioetatic becatuan herorceco, ambat maneras egun oros demonioac, munduac eta araguiac, procuracen baytute veren partetic herori gaytecen eta verce gayz eta desgraciaric asco egunoros guerta baytaquiquegu, viciaren, ossasunaren, honraren eta haziendaren contra, ceñetatic ecin iolaco maneras libra baycaytezque Iaungoycoaren favorea bague, remedioric oberena da meza ençutea presentacen

---

[1094] zayzquigu] jat. *zayzquigun*. Hutsen zerrendan zuzendua.

garadela Iesu Christo gure salvazallearen aurrean[1095] eta escatu libra gayzan gayz gucietatic, ala arimaren nola gorpuzaren. Eta mundu onetan ongui viciceco contra diradenetatic, ceren hau ongui eguiten dela, iaun au atraco da gure favore libracen gaytuela gayz gucietatic eta ayngueru sanduac iaun au acompañacen dutenac atraco dirade gure favoracera demonioaren eta berce etsayen contra. Eta, ala, atraco garade victoriarequi. <110r>

Azquenean, gucis auniz laguncen da meza ongui ençutea fiteago eta obequiago erdesteco Iaungoycoarenganic escacen disquiogun gauza guciac. Emendic atracen da nola al daguienac,[1096] bear luquela egunoros meza ençun andic atracen diraden ondasun eta provechuengatic.

Bigarren partean eta zorcigarren libruan, non escrivacen baytirade gauza señalatuac eguinicacoac Victoriaco monesterioco fraylen demboran, contacen da exemplo bat consideracio anditacoa. Eta da manera onetan: Erreguia Portugalecoa, Doña Isabel, izandu cen Iaungoycoaren cervizari andia. Çuen limosnero bat ceñec reparticen eta ematen baycituen erreguiaren manus limosna andiac gende bearrey. Erregue Don Dionis aren senarraren page batec imbidias erran cion erregueri «Daquiela orren magestadeac ece erreguia andrea dagola aficionaturic vere limosneroas conveni den bayno gueyago». <110v> Erregue espantatu cen, etzuen sinestatu xoyl, baya guelditu cen cuydadotan, ematen ciola cer pensatu. Determinatu çuen erran cionagatic illcera vere emaztearen limosneroa, baya disimulatuago eguiteagatic, ioan cen egun artan verean saldi gañean campora, passatu cen galcina labe baten aldetic, non ari baycira guizon baçuec labeari su ematen. Onetan ari ciradeney erran cioten secretuan eta manatu cituen ece vere jaureguico mutil batequi igorrico ciotela erratera ea eguin duçuen erregueac manatu cinduztena, eta hau onla erran eta bereala egoci zaçue labera, ceren ala conveni cela. Respondatu cioten puntualquiro eguinen çutela aren magestadeac manatu bezala. Biaramun goycean, igorri çuen erreguec vere emaztearen limosneroa mandatu onequi, baya Iaungoycoac nay izanda, çuen libratu peligro onetatic manera onetan. Guizon hon onec çuen devocio acostumbracen <111r> çuena egun oros meza ençutea. Cioayela, bada, vere manatu cizayona eguitera eta passacen cela elizaco atari batetic, jo çuten ezquila adi cezaten meza erratera cioayela sacerdotea, nay çuenac sartu mezaren ençutera. Vere costumbre onarequi cumpliceagatic, erreguiaren limosneroa sartu cen elizara meza ençutera. Meza ençuten cegon vitartean, desseorequi erregueac jaquin leen baño[1097] leen il cen, igorri çuen verce mutila imbidias avisatu çuena, eta nola ezpayçuen cuydadoric iduqui elizan sarceas eta ez meza ençuteas, baycic leen baño leen vere jaunari il berria eramoco ciola, joan cen leenic ion ere guelditu bague. Galcina-labera eldu cen beçala, erran cioten an ari ciradeney ea eguin çuten erregueac manatu cituena. Eldu cizayzquion, bereala, eta egoci çuten labera eta an acabatu cen. Bercea, culparic etzuena, vere devocio onarequi cumplitu eta joan cen

---

[1095] aurrean] jat. *aurean*.

[1096] daguienac] jat. *daquienac*. Ziurrenik errata da <q> eta <g>ren ordez; testuan badira beste *al daguien* gehiago.

[1097] baño] jat. *bayo*. Hutsen zerrendan zuzendua.

vere mandatuaren <111v> eguitera. Eldu cenean erran cioten labeari su ematen ari ciradeney «Erreguec igorcen niauc jaquin deçadan ea eguin duçuen, harc manatu cindustena». Eta nola imbidias acusatu çuena joan izandu baycen leen eta labera egoci bayçuten, respondatu cioten bayez. Ioan cen respuesta onequi erreguegana. Icusiric hau viciric eta icasiric nola bercea ill cen, informaturic ongui negocioas, aurquendu çuen gayzqui eta falsoquiro acusatu çuela erreguia eta aren limosneroa. Eta, ala, culparic etzuena elizan sartu mezaren enzutera eta sacramentu sanduaren adoracera eta ala Iaungoycoac libratu çuela. Eta berce bellacoa, imbidiosoa, falsoquiro acusatu çuena ala erreguia nola aren limosneroa vere becatuaren pena eta gaztigutan gaztigatu çuela. Eta, ala, ez erreguia andreac eta ez guizon onec çutela culparic.

San Antonino Florenciacoac escrivacen du atra ciradela iay egun bates <112r> bi lagun ciudade batetic campora placer arcera heyçara. Ohetatic batac iduqui çuen cuidado meza ençuteas eta berceac ez. Ciacela, bada, biac junto videas, assi cen dembora nastecacen ayces. Eta ciacen odeyac cargatus eguiten cituela ortosas ayn andiac eta oñazturac, ece baycirudien munduac ondatu bear çuela. Onetan ençun çuten oyu bat aycean, erraten çuela «Emoc, emoc». Gelditu ciraden espantaturic eta arrituric. Baciacen vere videas, honla ciacela herori cen ozmiarri bat eta eman cion mezaric ençun etzuen desdichatuari eta guelditu cen illic. Berce laguna guelditu cen ayn espantaturic eta casic juyzioric bague, etziaquiela cer eguin. Passatu cen aurrera vere videas. Honla ciala, ençun çuen berce oyu bat erraten çuela «Emoc, emoc», baya bereala ençun çuen berce oyu bat erraten çuela «Ecin ciroquetat, ceren ençun dic *verbum caro factum est*». Baycen erratea egun artan ençun çuela meza, ceren <112v> mezaren azquenean erraten da Iuandone Iuanes evangelistaren evangelioa, non baytaude escrivaturic itz ohec, ceñetan adicera ematen bayçaygu nola Iaungoycoaren semea eguin cen guizon, ceñen medios libratu bear baytugu gayz eta peligro gucietatic eta erdezi ondasun guciac. Argatic erranuen ez luquela mezatic iorc ere[1098] atra bear evangelio sandu au ençun bague.

Cessarioc contacen du peregrino bat ceriçola Vinando, juan cela berce lagun batzuequi erromerian Ierusalena. Guertatu cen ece Ierusalena elduric onen lagunec meza ençun eta determinatu çuten particera Bazcoa[1099] erresurrecioco egunean. Vinandoc erran cioten laguney «Egun Bazcoa eguna da, arrazio da egun sandu onetan gauden emen eta oficioac[1100] ençun dizagun». Etçuten nay izandu, baycic partitu ciraden bereala. Guiçon hon au guelditu cen egun artaco oficioac ençuteagatic. Biaramunean <113r> partitu cen lagunen atzean. Juntatu cizayon guiçon honratu bat zaldi gañean cioala, solas eman eta erran cion «Nondic zatoz, guiçon, hona orla ceurori bacarric?» Respondatu cion «Ierusalendic nator, lagunac nay nuen gueldi citecen egun arteraño eta etzuten nay, eta noaye neurau». Zaldi gañean cioanac erran cion «Igan zaytez ene zaldi onen anquetan». Igan cen bereala eta egun artan berean ezarri çuen vere hiriaren aldean, eta erran cion «Iesu Christori emozquioçu

[1098] yorc ere] jat. *yorquere*.
[1099] Bazcoa] jat. *Bazquoa*.
[1100] oficioac] jat. *oficiac*.

graciac, ceyn honrratu eta cerbizatu baytuçu egun meza ençuteas eta oficioac ençuteas, eta onengatic utzi baytituçu lagunac eta ceren igorri baynau ezarri zayzadan ayn vide urrutitic egun bates çure errian. Hara non den çure echea, çoas eta erran drazoteçu Iaugoycoac çure baytan eguiten duen maravilla ayn andia». Aydec eta adisquidec icusi çuten bezala, erran cioten: «Non dituçu lagunac?» Respondatu cioten: «Egun goycean nengon Ierusalenen,[1101] <113v> eta ayec atra ciraden atzo, ni an utziric eta gueros eztitut icusi». Baya etzuten sinestatu; aytcetic, erraten cioten «guiçon oni heratu çayo». Erran dezala egun, egonic Ierusalenen, datorrela ayn vide urrutitic, nola batec eta bercec erraten baycioten «heratu çayo». Joan cen sobratu cizayon diruarequi Iuandone Iacuera, eta andic etorri cen berce lagunac Ierusalenetic etorri bayno len. Andic dembora auniz passatu eta, etorri ciraden lagunac. Hiricoec icusi citusten bezala erraten cioten «Vinando Bazcoac biaramunean etorri cen eta erran draugu çuec Bazco egunean partitu cinatela Ierusalendic, hura an utziric, eta eztugu sinestatu». Respondatu cioten bayez, harc erran cisquioten guciac ciradela eguiac. Onequi eman cioten sineste eta barrayatu cen maravilla hau herri ayetan gucietan, eta Iaungoycoa alabatu çuten.

Beda honrratuac Ingalatierraco historian oguey eta vigarren capituloan <114r> escrivacen du Imma cerizon mutil gazte bat batalla batean çauritu eta artu çutela preso eta eramo çutela cautivo. Sendatu cen beçala eçarri cizquioten cateac eta grilloac. Eta egun oros goyceco bedraci horduetan, verac laxacen eta erorcen cizayzquiola eta gueldicen cela libre, onen causas aunizec nay çutela veren echetan iduqui, eta, ala, izandu çuela auniz iaun eta nagusi. Batec, icusiric nola laxacen ciçasquion grilloac eta cateac, eman cion libertadea, leen juramentu arturic igorrico ciola biac igualatu ciraden cantidade bat errescateagatic. Ioan cen vere errira eta igorri cion, igoalatu ciraden cantidade errescateagatic. Iaquin izandu çuen ece aren anaye sacerdote batec egun oros arengatic erraten çuela meza eta sacramentu sandua alchacen çuenean guencen cizayzquiola loturic ceuzquien burniac, eta ala gueldicen cela libre nondic etorri baycizayon libertatea izatera.

## <121v> Amargarren capituloa

### Cer eguin bear den mezacoan eta nola egon

Meza ençuten duenac lembicicoric eguin bear duena sacerdotea sacristaniatic atracen den bitartean meza erratera da otoytz eguin Iaungoycoari demon vere favorea eta gracia meza ongui ençuteco aren divina magestadeari agrada daquicon[1102] bezala, erraten duela «Iesu Christo, ene iauna, suplicacen drauçut eman drazadaçun çure favorea eta gracia egoteco mezan, conciencia garviarequi, atenciorequi eta erreverenciarequi, çuri agradacen zayçun bezala, oroytzen naycela enegatic ceure vician eta heriotzean eguin cinducen ondasunes eta passatu cinducen trabajues».

---

[1101] Austriako edizio digitalean hemen berriro 109 orrira itzultzen da eta hortik aurrera jarraitzen du, orrialdeak errepikatuz. Digitalizatzean egindako hutsa bide da.

[1102] agrada daquicon] jat. *agradaquicon*.

Bigarren eguin bear duena da egon al daguien devocio eta atencio guciarequi. Ezta egon bear arrimaturic eta <122r> ez belaurico solamente belaun bates, baycic bies, eta ez minzacen dela bata bercearequi, eta ez alde batera eta bercera beguiracen duela. Ceren bayta miramentu guti eta gayzqui aguiri den gauza honla egotea Iesu Christoren aurrean. Irurgarrena, ez izanagatic gauza gaystoa oracio erratea errosario eta verce itzes erraten diraden oracioac, gucis da obeago ohec utziric egon viotzas pensacen eta consideracen duela mezan diraden misterioac, nola adicera eman bayta tratatu denean cer eguin bear duen meza ençuten duenac leenetic assi eta azquenerańo. Ceren honla ençuten da obequiago eta Elizac nay duen bezala. Biaye consideratus erran diraden misterioac eta sacerdoteac erraten dituenean itzac meza ençuten duenac adicen dituen bezala. Latinic adicen badu, biaye, horduan, vere baytan erranes viotzas sacerdoteac erraten duena manera onetan erraten duenean «Ni, becataria, confessacen nayçayo Iaungoycoari» <122v> eta aurrera confessacen duela dela becataria. Alaver, meza ençuten duenac eguin bez hura vera. Eta sacerdoteac alabacen duenean Iaungoycoa edo escacen dionean conveni zayguna, alaver, meza ençuten duenac alaba bez eta esca braço harc bezala. Eta, ala, berce gaucetan viotzas, bere baytan secretuan, eta ez itzes, berce mezan daudenec adi dezaqueten bezala. Latinic eztaquienac eta, ala, adicen eztuenac cer sacerdoteac erraten duen, beuca intencio eta desseo eguiteco sacerdoteac Elizaco ministroac eguiten duena. Eta oracioac[1103] itzes erraten diradenac eta salmoac penitenciascoac utci biz berce demboretaco, eta iolaco maneras eztezala utzi ofreciceco mezaco sacrificioa; eta comecacea viotzas eta desseos leen erran den bezala. Ceren ohec eguiten dituela ongui izanen du parte meza ençuten duen horos, Iesu Christoren obra eta ondasunetan. <123r>

Adverticen da ece meza ençuten duenac eztuela erran bear itzac berce mezan daudenec adi dezaqueten bezala, baycic vere baytan, baracheco, ceren meza erraten duena, eta ez berceac estorva eztiçan.

Nola bear den mezan egon lembicicoric erranen da meza cantatuan, guero erreçatuan. Meza cantatua, missale Erromacoac eracusten digunaren conforme, bear da ençun baçutan chutiric, eta berce aldi baçuetan belaurico. Berce baçuetan jarriric, sacerdotea atracen denean sacristiatic eta erraten duenean «*In nomine patris et filii et spiritus*[1104] *sancti, judicame*» eta confessioa eta berce lembicico itzac, ariqueta aldarera igan arterańo egon bear da belaurico. Guero, assicen denean mezan eta erraten «*Kyrie eleyson, Christe eleyson*», jarriric. Gloria cantacen denean chutituric eta, alaver, oracioac erraten diradenean urte gucian, barur egunetan, gariçuman, carta demboretan eta avenduco <123v> astregunetan cantacen diraden oracioes landara. Ceren ohetan egon bear du meza ençuten duenac belaurico eta, alaver, *requiem* meza cantacen denean. Vigilietatic bear dirade atra Bazcoa, Eguberri bezpera eta Baz-

---

[1103] oracioac] jat. *oratioac*. Ez dirudi kultismoa denik, gainerako guztietan *oracio* ageri baita; aitzitik, inprentako kajisten hutsa izan daiteke, ohikoa baita <c> eta <t> nahastea.

[1104] *spiritus*] jat. *spriritus*. Ziur aski hutsa da, gaztelaniazkoak *spiritus* baitakar.

coa Gariçumacoarena[1105] eta Espiritu Sanduarena, ceren egun ohetan bear da egon chutituric bercean bezala.

Epistola bear da ençun jarriric eta, alaver, dagoque ariqueta evangelioa assi arteraño.

Evangelioa bear da ençun chutiric. Solamente bear da jarri belaurico Iuandone Iuaniscen evangelioan itz ayec erraten diradenean: «*Et verbum caro factum est*». Eta San Matheoren evangelioan itz ayec erraten diradenean: «*Et procidentes adorauerunt eum*». Eta Gariçumaco laugarren asteco asteazquenean leycen den evangelioan erraten diradenean itz ayec: «*Et procidens adorauit eum*. Eta passioa leycen denean erraten denean «*Expirauit*», ceren ohetan <124r> evangelioa erraten duena jarricen da belaurico. Alaver, bear du meza ençuten duenac eta jayqui sacerdotea jayquicen denean.

Credoa cantacen denean bear da egon chutituric solamente erraten denean: «*Et incarnatus est de spiritu sancto & homo factus est*». Meza erraten duena jarricen da belaurico. Alaver, bear du jarri belaurico meza ençuten duenac eta jayqui sacerdotea jayquicen denenan. Credoa acavatu eta ariqueta prefaciorayno dagoque jarriric. Prefacioa bear da ençun chutituric, ariqueta assi arterayno erraten *Sanctus, sanctus, sanctus*. Ceren orduan bear da jarri belaurico. Eta, ala, eguiten dute gayzqui jarriric egoten diradenec, nola asco egoten bayta jarriric *Sanctus sanctus* erranagatic, bay eta honla egoten baytirade ariqueta meza erraten duenac hostia consagraceco escuetan artu arterayno. Ezta ambat echeden bear, baycic *Sanctus* ençun dezan bezala, bear da jarri <124v> belaurico, ceren horduan ayngueru sanduequi vatean bear du meza ençuten duenac confessatu eta alavatu Trinitate sandua erraten duela «Sandua, sandua, sandua, zarade, iauna. Ayta, Semea eta Espiritu Sandua». Sandua izateas ambat preciacen da Iaungoycoa. Eta, ala, gogotic eta placer arcen dugula gueuren baytan erran bear ditugu itz ohec: «Eta bedeycatua da Iaunaren icenean datorrena». Eta echeden honla munduaren salvaçallearen eta ceruco erregue eta iaunaren etorceari aldarera, ofreciceco sacrificioan vere ayta eternoari. Bada, gauza ohec arrazio da eguin ditecen belaurico daudela. Eta, ala, honla egon bear da ariqueta meza erraten duenac Iesu Christoren gorpuça eta odola errecebitu arterayno. Guero dagoque jarriric, ariqueta azqueneco oracioac[1106] erran arterayno. Ceren ohec bear dirade ençun belaurico, lembicico oracioac bezala. Han erran den demboras landara, bedeycio meza erraten duenac azquenean <125r> egozten duenean bear da egon belaurico, ala meza cantatuan nola erreçatuan eguiten dute gayzqui bedeycioa egosten denean jayquicen diradenec.

Meza erreçatua gucia bear da ençun belaurico, evangelioas landara, solamente bear da evangelioa belaurico jarri, Iuandone Iuaniscen evangelioan erraten denean «*Et verbum caro factum est*» eta San Matheoren evangelioan erraten denean «*Et procidentes adorauerunt eum*» eta berce erran denetan. Meza cantatuetan nola bear den jarri belaurico, sacerdotea jarricen denean

[1105] gariçumacoarena] jat. *Garicumacoarena*.
[1106] oracioac] jat. *oraciac*.

eta jayqui hura jayquicen denean, jaquinica Concilio Tridentinoac auniz conveni dela christio fielec daquiten cer den meza eta nola bear den ençun, eta cer den han ofrecicen den sacrificioa eta nola bear den ofratu. Eta berce misterioac manacen ditu arimes cuydado eta cargu dutenac igandetan eta iayetan mezacoan declara drazoten <125v> cerbayt veren hiricoey, particularquiro han ofrecicen den sacrificioaren misterioac. Eta, alaver, manacen du Sinodoac lembicico libruan, irurgarren capituloan, cerengatic latinic eztaquienac eta leycen, nondic jaquinen du eracusi ezpadrazote? Eta ez jaquitetic dator ambat calte eta daynu, ece auniz baytoaye mezara eta ezpaytaquite certara eta ez cer den meza, eta cer den han ofrecicen den sacrificioa, eta nola bear den ofratu, eta berce gauzac. Eta, ala, daude ilac bezala viotzas den becanbates, eztutela obratan eçarcen, fedea, esperança eta caridadea eta berce gauzatic asco, eguinen bayluquete baliaquite. Eta, ala, mezatic atracen dirade, ez ambat provechurequi nola atraco bayluquete baliaquite, ceyn da christioac[1107] baliaqui nola Christo gure iauna[1108] meza erraten den horos jaycicen dela cerutic aldarera, ceruan gueldicen dela eta mezan daucagula presentean gueurequi etorriric <126r> gure amoreacatic eta guri ondasun eguiteagatic misericordias eta ondasunes beteric. Eta desseoarequi eta podorearequi verarequi munduan ibildu cenean iduquitu çuenarequi, guri gueuren becatuac barcaceco andiac eta auniz içanagatic, ezpayluque alabatuco eta adoratuco eta graciac emanen Iaun ayn onari eguiten dizquigun ondasun eta merchedengatic, eta ezpayluque sartu nay vere viotzean eta onerici vere entraña gucies eta cervizatu nay luen gauza gucietan, ceyn liçate atraco bayliçate mezatic han ofrecicen den sacrificioa ofratu bague. Alas eta, artara, datorrenean cerutic aldarera, ofreci drazoten vere ayta eternoari vere meregitu cizquigun obra eta ondasun guciequi. Eta aren medios, otoytz eguin drazogun barca drazquigun gueuren becatu guciac eta socorra gaytzan gueuren necessidade gucietan erremediacen gaytuela gucietatic eta dizquigun gueuren arimen salvaceco <126v> bear ditugun gauza guciac. Gauza ohec guciac, eta berceric here, bay eguinen lituzquete baliazquizquite oray erran diraden misterioac. Argatic, apezec eta vicarioec edo edoceyn personec baytute arimes cargu, eguin beçate concilioac eta sinodoac manacen duena eracusteas igande bates misterio bat, berce bates berce bat eta ala berceac, ece hau eguin badedi bear den bezala, arte guti bates baycic ezpada here, da gauza ciertoa aurquenduco dutela provechua veren carguco dituztenetan eta confessioac, eta comecaceac eta ondasun guciac eguinen dituztela, obequiago.

Iaungoycoac dituela esquerrac eta alabançac.[1109]

**Euscarasco capituloen tabla**



[1107] Christioac] jat. *christioa*.

[1108] Iauna] jat. *iuauna*.

[1109] Hemendik aurrera orrialdeek ez dute zenbakirik.

Irurgarren capituloa, cer eguin bear den meza ongui ençuteco eta cer intencio eraman eta cer reverenciarequi eta devociorequi egon bear den.

Laurgarren capituloa, cer eguin bear duen meza ençuten duenac lembicitic assi eta evangelioraño.

Borzgarren capituloa, cer eguin bear duen meza ençuten duenac evangeliotic assi eta prefacioraino.

Seygarren capituloa, cer eguin bear duen meza ençuten duenac prefaciotic assi eta consagracioraño.

Çaspigarren capituloa, cer eguin bear duen meza ençuten duenac hostia eta caliza consagratu eta ariqueta meza erraten duenac Iesu Christoren gorpuza eta odola errecebitu arteraño.

Çorzigarren capituloa, cer eguin bear duen meza ençuten duenac meza erraten duenac Iesu Christoren gorpuza eta odola errecebitu eta azqueneraño. fol. 97.

Bedracigarren capituloa, cembat eta ceyn andiac diraden meza ongui ençutetic atracen diraden provechuac. fol 106.

Amargarren capituloa, cer eguin bear den mezacoan eta nola egon. fol 121.

### *2.4.1.1.2. Iruzkina*

Liburuan agertzen diren bokal bikoitzek kontu grafikoak dirudite. Testuan <ee> bakarrik agertzen da bikoizturik, eta beti adibide beretan: *leen* (*passim*) eta *itcees* (*passim*) 'iltzeez', agian *itzes* 'hitzez' eta *itçen* (7v) 'hitzen' modukoetatik bereizteko. Salbuespen gisa eman daiteke *corporaleec adicera ematen digute* (11v). Horrezaz lekora, <b> -rekin batera, <v> eta <u> erabiltzen dira balio kontsonantikoarekin: *deuoeciorequi* (30r), *erreuerenciarequi* (31r); baina balio bokalikoa <u>-k bakarrik du. Bokal arteko txistukari afrikatuak bereizi egin ohi dira obra honetan. Hortaz, afrikatu apikaria adierazteko <ts> eta, behin bederen, <ss> digrafoak darabiltza: *eracutsi* (19r), *etsaya* (27v), *erdetsi* (29v), *essaya* (94r). Bizkarkarirako, aldiz, <tç>, <tz> eta <tc> baliatzen ditu. Azken hori beti <i> eta <e> aurretik bakarrik agertzen da, baina aurreneko biak testuinguru guztietan: *baytçen* (7r), *itçen* (7v), *aytcetic* (8v), *viotzean* (28r), *otoytz* (29r). Edonola ere, ez da beti egiten afrikatu eta igurzkarien arteko bereizketa grafikoa: *tratacen* (6v), *herioçean* (7r). Bidenabar, afrikatu eta frikarien arteko grafia bereizketa soilik bokal artean eta hitz bukaeran egiten du Beriainek; inoiz ez kontsonante ozenen ondoren. Horietan ez du digraforik inoiz erabiltzen. Afrikatuekin darabilen irizpide berbera jarraitzen bide du igurzkariekin: <ç> eta <z> bokal guztiekin ageri dira, <c> igurzkari gisa soilik <i> eta <e>-rekin. Txistukari igurzkariez dihardugula, sabaiaurrekoa egiteko <g> erabiltzen du *igilic* (28v) adibidea. Ez dago, horren garbi, ordea, zein hots islatzen den *meregitu* (*passim*), *meregiceagatic* (71v), *meregimentuetan* (75r) adibideetan. Edonola ere, <x> ere agertzen da igurzkari sabaiaurrekoa irudikatzeko: *ixurcen* (9r). Horrezaz gain, ziurrenik inprenta kontuak direla eta, bokal ondoko sudurkaria islatzeko, kontsonanteari dagokion grafemaren ordez bokalak <˜> diakritikoa darama batzuetan. Bestalde, testuan hasperena isla lezaketen <h>-z gain, beste <h> espletibo batzuk badira: *horduan* (7r), *here* (8r). Era berean, badirudi beste <h> batzuk hitz hasierako <u>-ren balio bokalikoa markatzeko eta berdin ahoskatzen den beste hitz batetik bereizteko erabiltzen direla: *hura* (*passim*),

*hucatuco* (77v), *humeac* (91r). Beste batzuek, maileguak izanik, jatorrizkoaren <h> mantendu dute: *humildaderequi* (*passim*), *humildade* (29v). Grafia kontuekin bukatzeko, idazkera kultuaren eragina agertzen da, bereziki pertsona izenetan: *Christo* (*passim*), *Chrisostomo* (8r), *Melchisedech* (17r), *Thomas* (89r), *Matheo* (123v).

Fonologiaz den bezainbatez, bokal bakuntzeak nabarmenak dira: *doctoren* (7r), *erreguen* (16v), *Aydec eta adisquidec* (113r). Adibide bakarra aurkitu dugu bokal bikoitza duena: *corporaleec* (11v). Goraxeago aipatu dugunez, *leen* eta *itcees* adibideek kontu grafikoak dirudite, azkenak batez ere. Bestalde, *ai* > *a* gertatu da adibide batzuetan: *bayçat* (17v), *bayçazquit* (18r), *ambat* (*passim*), *beçanbates* (*passim*). Halaber, *ai* > *i* gertatu da *diteque* (*passim*) adibidean. Gainera, *a* > *au* ere badago *auniz* (*passim*) adibidean, baina behin *aniz* (60r) ere bada. Badirudi *i-e* > *i-i* gertatu dela *iriquicen* (31v) adibidean, eta *o-e* > *o-o* dago *horon* (45v) hitzean. Horrezaz landa, sinkopa aski indartsua da: *atra* (*passim*), *atracen* (*passim*), *baytrama*, *dramanac* (11v), *obrenac* (30r), *bapedrac* (31r), *onlacoec* (31v), *onlaco* (32r), *bedraci* (41r), *erran braço* (44r), *ezpaytrama* (44v), *baytrauçut* (76v). Halere, badira salbuespenak, besteak beste: *abarasa* (8r), *batere, misterio, onetan* (*passim*).

Kontsonanteei begiratuz gero, irudi luke testuko <h> batzuek hasperena islatzen dutela. Julen Manterolak (2015: 504 eta hh.) erakutsi bezala, hasperenaren adibide dirateke, besteak beste, *ayhec* (7v) eta *ohec* (9r). Nolanahi ere, galtzear zegoen hasperena ordurako, eta ez da, testuetan, sistematikoki agertzen. Hasperenaren galerak eragindako hiatoa saiheste aldera, *-g-* gehitu da: *agotic* (7r), *agoan*, *agoas* (55r). Herskariez den bezainbatean, ahostuna dugu *becatu* (*passim*), *galcina* (110v), *gaztigatu* (111v) gisako maileguetan; bai eta *guendu* (*passim*) hitzean. Bestalde, txistukarien neutralizazioa gertatzen da, batzuetan, herskari aurretik: *cisquioten* (10v), *cisquigun* (18r), baina *cizquigun* (*passim*) ere bada. Goiko bokalen eraginez, ondoko sudurkaria eta albokaria sabaikaritzen da, oro har: *salvazalleac* (7v) *cebillen*, (8r), *orzillare* (17r) albokarien kasuan, eta sudurkarietan *ceñec* (*passim*), *bayño* (8v), *soñetan*, *oñetan* (9r), *azquenerańo* (9v). Grafia horretaz gain, <yn> ere ager daiteke sabaikaria islatzeko *daynu* (125v) adibidean ikus dezakegunez, beraz, ezin jakin testuan agertzen diren *ceyn*, *ayn* eta bestelako adibideetan sudurkari sabaikaria dugun. Batzuetan, /t/ sabaikaritu egiten dela dirudi: *gutti* (*passim*), baina *guti* ere ageri da.

Bestalde, maileguetan *-ale* egiten da; honatx lagin bat: *animale* (17r), *ofiçiale* (26r), *mortale* (27v), *caudale* (75r). Bestalde, latinez *-tione* bukaera duten hitzetan *-zio* daukagu: *sacrificio*, *consagracio*, *intecio* (*passim*). Aldiz, *-io* egin da *arracio* (56r) 'arrazoi' hitzean. Kontsonante multzoei dagokienez, *-rz-* multzoa agertzen da sistematikoki: *bercela* (*passim*), *orzegun* (*passim*), *orzeguneco* (8r), *berce* (18v), *orzillare* (17r). Ezin jakin, zehazki, afrikatu ala igurzkari den txistukaria. Beriainek bokal artean grafikoki berezi ohi dituen arren, ozen ondoan ez dugu halakorik. Beraz, pentsa liteke, artean, igurzkari ahoskatzen zela.

Morfologiari dagokionez, artikulu hurbila agertzen da; honatx bi adibide: *gucioc* (11v), *diradenoc* (32r). Ohiko artikulua dela eta, badirudi erabilera ez dela geroago izango den bezain hedatua, eta mugagabea maiz erabiltzen da: *Sacrificio ofrecicea da* (16v). Dena dela, behin bada ere *arria andi ura* (11v) agertzen da, artikuluaren eremua zabaldurik; edonola ere, hutsa izan daiteke. Bestalde, Beriainek darabiltzan izenordain indartuak *hau verau*, *hura vera* (*passim*), *ceurori* (43r), *veronec* (*passim*), *gueurec* (91r) eta *neurau* (113r) dira. Posesibo indartuetan *neure* eta *ceure* &

*çeure* erabiltzen ditu, baina lehen pertsonako pluralean aldaera pleonastikoa agertzen da beti: *gueuren* (*passim*). Izenordain indartu gabeetan, aldiz, lehen pertsona singularrean beti *ene* (*passim*) erabiltzen da, inoiz ez *nire*. Ezezko polaritatea duten izenordainetan: *iori* (16r), *ior* (57v) gisakoak ditugu. Zenbatzaileetan, *ceymbat* (7r), *ceimbayt* (16v), *çeynbaytec* (84v) 'zenbait', aldaerak ditugu.

Kasu markez den bezainbatez, ergatibo pluralean *-ek* agertzen da; hauek adibide: *cerviçariec ofrecicen dutela* (9v), *soldadoec eguin çuten arças burla* (11r). Instrumentalari dagokionez, beti aldaera apikaria darabil: *iaunas* (7r), *virtutes*, *maneras* (7v), *obras* (41r). Gainera, izenordainekin *-sas*, *-zas* eta *-ças* ditugu: *ayhesas* (7r), *ohesas* (11v), *onesas* (97v), *arças* (11r), *guzas* (41r), *nizas* (96v), *cerzas* (89r). Soziatiboan bi formak erabiltzen ditu, *-reki* zein *-rekin*. Nolanahi ere, lehena da nagusi: *gutiagorequi* (7v), *çuenarequi*, *verarequi*, *desseoarequi* (8r), *andiarequi* (9r). Bigarrena bi aldiz baizik ez dugu aurkitu: *guciarequin* (44v), *andiarequin* (73r). Datiboan singularrean *-ari* erabiltzen da, baina *batey* (*passim*) erabiltzen du *bat* zenbatzailearen kasuan. Pluralean beti da *-ei*: *guciey* (7r), *becatariey* (8r), *ceyney* (8v), *aynguiruey* (9v); ez da agertzen, beraz, testu berriagoetan erabiltzen den *-eri*. Destinatiboan *-endaco* dago: *arimendaco* (45v), *duenarendaco* (53r), *becatariendaco* (53v). Bizidunen kasuetan, ekialde zabaleko berrikuntza den *baita(-)* agertzen da: *principalenetatic da Iaungoyco eguiazcoaren baytan* (16v), *Mariaren baytatic* (57r), *vere baytan* (26v), *neure baytan* (59v). Hala ere, *baytatic*-en ondoan, *-ganic* zaharragoa ere badugu: *jayo cena arenganic* (7r), *Iaungoycoarenganic* (*passim*), besteak beste. Adlatiboan beti *-gana* erabiltzen du; inoiz ez *baytara*. Tarteka bizidunekin *-etara* erabiltzen du: *meza ençuten dutenetara* (43v), *apostoluetara etorceagatic* (73v). Ablatibo plurala egiteko, nagusiki, *-etarik* erabiltzen du, baina *-etatik* ere badauka: *çaurietaric*, *gaystoenetaric* (9r), *iletaric* (9v, 57r), *oberenetaric* (16v), *gucietaric* (72) ditu, besteak beste; baina *principalenetatic* (10r), *garvietatic* (17r), *lecuetatic* (30v), *ceñetatic* (39v), *profetetatic* (45r). Partitiboan beti *-rik* darabil, inoiz ez *-rika(n)* erdiguneko berrikuntza: *oguiric eta ardoric* (7v), *faltaric* (8v), *piedaderic* (9r), etab. Motibatibo plurala egiteko *-gatik* genitibo edo absolutiboari gehi dakieke: *amoreacatic* (26v, 68r), *ondasunengatic* (27r). Prolatiboan *-zat* orokorra erabiltzen du: *heroçat* (11r).

Atzizkiei gagozkielarik, *-(r)ik*, *-(r)ika* eta *-(r)ikan* erabiltzen ditu partizipioekin moduzko adberbioak sortzeko: *escrivaturic* (7r), *billosiric* (9v), *criaturican* (93v, bi aldiz), *galdeguinica* (11r), *jaquinica* (*passim*), *emanica* (58r). Era berean, *-qui* erabiltzen da adjektiboak oinarri hartu eta adberbioak osatzeko: *obequi* (41r), *ongui* (*passim*), *gayzqui* (*passim*). Atzizkiez dihardugula, *-tasun* aldaera erabiltzen du gehien bat: *damutasuna* (28r), *adisquidetasunean* (53v), *arguitasuna* (76v). Halere, bi aldiz *-tazun* agertzen da: *garvitazunarequi* (53r eta 53v) baina *garbitasuna* (53r). Aditzak oinarri harturik izenak sortzeko *-tze* aldaera erabiltzen da, ekialde zabalean ohi denez: *jayoce* (*passim*), *vicice* (56r). Bestalde, *-kiro* ere atzizki emankorra da moduzko adberbioak sortzeko; honatx, besteak beste, adibide batzuk: *cruelquiro* (8v), *comunquiro* (9v), *particularquiro* (26v), *liberalquiro* (58v).

Aditzei dagokienez, nabarmentzekoa da *-n*-z bukatutako aditzetan geroaldia egiteko *-en* erabiltzen dela beti: *eguinen*, *içanen*, *emanen* adibideak maiz aurki ditzakegu testuan. Gainerakoetan *-ko* agertzen da: *guenduco*, *guelditucо* (28r), *cumplituco* (44v). Aditz-izenei dagokienez, oro har, *-tze* nagusitu bada ere, fosilduriko egituran *-te* mantentzen da adibide batean: *ezcaytzaçula utzi tentacioan erortera* (93r). Bistakoa da fosilduriko egituran agertzen dela, aitagureko zati horretaz landa

ez baita *-te* erabiltzen aditz horrekin; ikus, esaterako, *erorceco* (93v), *erorcen* (108v). Huts grafikoa denik ez dirudi, dotrinan ere egitura berean *-te* baitarabil. Bestalde, *-i*-z amaitutakoetan *-tzen* gehitu da partizipioaren gainean, ez aditzoinaren gainean: *jancicen* (10v), *ercicen* (11r), *jarricen* (29r), *jaycicen* (31v) eta *assicen* (39v). Partizipio pleonastikoak ageri dira *-l* eta *-n*-z amaitzen diren aditzetan: *ibildu* (7r, 54r), baina inoiz ez *ibili*; *içandu*, *izandu* gisakoak oso maiz erabiltzen ditu; aldiz, *izan* oso bakan. *Egondu* agertzen bada ere, nagusiki *egon* aldaera erabiltzen du. Testuan *iduquituric* (*passim*) eta *iduquitu* (126r) ere badira. Partizipioez den bezainbatez, badirudi batzuetan adjektibo funtzioa dutela: *becatu eguines* (*passim*), *becatu passatuetatic* (93v), *sacerdotea igan aldarera* (40v); cf. gazt. *el sacerdote puesto en el altar empieza* (34r).

Jokatuei dagokienez, trinkoaren erabilera nabarmena da, ondoko garaietan baino erabiliagoa bederen. Agintera eta jusibo trinkoa agertzen da: *zaudete gogos eta pensamentus eguiten duçuen gauzan* (30v), *iducaçu misericordia guzas* (94v). Horien artean nagusi dira *-i(n)-* erroaren adizki trinkoak: *digun favore eta gracia ongui viciceco* (29v), *indaçu fedea, esperança eta caridadea* (75r). Bestalde, subjuntibo trinkoa ageri da: *gu gauden humildade eta erreverencia gueyagorequi* (29v), *ala arrazio gueyago da gu gauden erreverencia eta devociorequi Iesu Christo gure iaunaren aurrean* (30r), *escacen dio […] digun baquea, berce aldi baçues, digun fedea* (44v), *otoytz eguin Iaungoycoari demon vere favorea eta gracia* (112v). Behin bada ere, geroaldi trinkoa erabiltzen du Beriainek: *aren partetic eztate faltaric* (107v).

*Izan* aditzaren orainaldiko 3. pertsona *dirade* forma pleonastikoa erabiltzen da beti, *dira* behin bakarrik lekukotzen da *baytira* (75v) forman. Halaber, *garade* eta *zarade* agertzen dira beti, eta ez *gara* eta *zara*. Iraganean, *cinadela* eta *etcinadena* (57r) agertzen da; gainerakoan, *cinala* (*passim*) eta *cinanean* (94v) gisakoak ditugu. Goi-nafarreraz ohikoa denez, *joan* aditzaren forma jokatuetan *cioayenean*, *doayenean* (12r), *baliaye* (27v), *doayen* (26r), *noaye* (113r) eta *biaye* (122r) ditugu. Horiekin batera, iraganeko hirugarren pertsonan *ciacen*, *ciacela* (112r) ditugu pluralean, eta *ciala* (112r) singularrean. *Eman* eta *eraman* aditzaren forma trinkoak ere agertzen dira: *demozquioçun* (59r), *emoçu* (75v), *emoc* (112r), *emozquiozu* (112v) eta *dramanac* (11v), *dramanean* (30r), *dramazquiçun* (76r, 90v). *Itxaron* aditzaren aginterazko adizki trinkoa bide da *echedaçue* (32v), eta *eduki* aditzarena *beuca* (56r). Ahalera trinkoa ere agertzen da *-ke* atzizkiarekin: *duqueten* (67v), *ezpaytuque* (89r), *daucaque* (91r), *dagoque* (123v, 124r).

Nagusiki, iraganean *-n* mantentzen da: *izuli çuen* (7v), *eguin izandu bayçuen* (8v), *meregitu cisquigun* (10r). Hala ere, badira hegoaldeko goi-nafarreraz ohikoak diren *-n* gabeko adizkiak: *ezpaycio respondatu* (11r), *ala cio vere viotcean* (71r), *eman cigu* (71v). Beharbada, horren arrazoia da Iruñean bietarik egiten zela.

**Edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da: *dugu* (*passim*). Bestalde, iraganeko adizkietan *-ind-* dago: *cinducela*, *cinduen* (94v), *cinduztena* (110v), *cinducen* (121v). Halaber, adizki horien pluralgilea *-z-*: *cinducela* 'zenituela' (94v), *cinducen* 'zenituen' (121v). Horrezaz gain, orainaldiko adizkietan *-au-* > *-ai-* egin da: *nayçula* (*passim*).

Indikatiboaz landako perifrasietan, espero litekeenez, **edin* daukagu NOR sailean, eta *a_i* > *e_i* gertatu da: *atra dedin* (10r), *considera dedin* (26r), *aurquin dedin* (26v). Halaber, sail bereko hirugarren pertsonan *ai* > *i* gertatu da: *converti ditecen* (8r),

*eguin diteque* (19r), *dey ditezquela* (93v). NOR-NORI sailean, ohiko *ofreci al daquioquen*, *agrada daquioque* (18v), *agrada daquion* (30r) eta antzekoekin batera, *gerta daquico* (44v) eta *agra daquicon* (121v) daude. Alegia, hirugarren pertsonaren datibo marka *-o* eta *-ko* dira adizki horietan.

NOR-NORI-NORK sailean indikatiboko formetan *-i(n)-* erroa da nagusi: *meregitu cisquigun*, *erraten ciotela* (10r), *ematen cisquioten* (10v), *ematen digute* (11v), adibidez. Hala ere, **eradun* ere maiz agertzen da: *ematen drauan*, *ematen draugu* (10v, 11v), *igorcen draugu* (18v). Maiztasunari dagokionez *-i(n)-* erroa ager zitekeen kasuen % 83an agertzen da, 205 aldiz; **eradun*, ordea, % 17an, 43 aldiz. Gainera, aipagarri da **eradun* aditzaren kasuan, erabilera gehiena aipuetan eta otoitzetan gertatzen dela, eta horietatik kanpo lekukotzen den adizkia ia bakarra *draugu* da.

Sail berean, baina indikatibotik kanpokoetan, hegoaldeko goi-nafarreraz lekukotzen den **erazan* dugu: *eman drazquiogun* (10r), *igor draçogun* (18r), *barca drazquigun* (18v), *eman draçoquete* (18v), *eman draçoquegutela* (19r). NOR-NORK sailean, aldiz, **ezan* erabiltzen da: *alava dezagun* (10r), *considera çaçue* (10v), *erran dezan*, *ençun dezaten* (39v). Nolanahi ere, **iron* gutxi, baina agertzen da: *nola bayta ambat diroquena* (43v), *ecin ciroquetat* (112r). **Ezan* aditzaren hirugarren pertsonako aginterazko formetan amaierako *-a* galtzen da: *pensa ezpadez* (26r), *erran bez* (90v), *erran bales* (91r), *eguin bez*, *alaba bez* (122v), *utci biz* (122v).

Arestiko adibideetan eta ondokoetan ikus dezakegunez, indikatibotik landako perifrasietan aditzoina mantentzen: *içul draçon* (58r), *ene beguiec icus dezaten*. Hala ere, *etorri bedi* (84v) daukagu.

Perifrasietan, batzuetan, datiboaren komunztadura falta du aditz laguntzaileak: *ofrecitu çuen vere gorpuça eta vere odola vere ayta eternoari*, *Elizari prometatu çuena* (10r), *otoytz eguin dezaten Iaungoycoari* (39v), *onetaco escacen duela virgina andre dona Mariari eta iaun done Miquel ayngueruari eta sandu guciey eta sacerdoteari otoytz eguin dezaten Iaungoycoaren aurrean* (40r), *nola egon vear baytute Iaungoycoari escatu bear dutenac ayn ondasun andiac* (43v), *otoytz eguin bear du Iaungoycoari* (60r), *otoytz eguin bear du Iaungoycoari* (67v). Pluraleko komunztadura ere batzuetan falta da: *Adverticen da ece meza ençuten duenac eztuela erran bear itzac* (123r).

Baldintzazko perpausak osatzeko, perifrasi berriarekin batera, *baldin nay badugu* (4v), *baldin haurquendu baguina* (17v), zaharrarekin osatutakoa ere usu agertzen da Beriainen testu honetan: *guen badeçagu* (27v), *eztaquienac erran bales* (91r), *eracusi ezpadrazote* (125v), *hau eguin badedi bear den bezala* (126v).

Nabarmentzekoa dirudi *l-* aurrizkiaren erabilera, perpaus nagusiko aditza iraganekoa denean: *ocasio onas escacen liola ondasun auniz* (27v) eta *agradaceco nay luen gauzetan* (68v).

Pluralgileei dagokienez, merezi luke *-te*-k duen hedadura aipatzea, sail guztietan ageri baita. **Edun*-ekin hauek ditugu, besteak beste: *dute* (25v) eta *dituztenac* (42v). Halaber, *-i(n)-* erroarekin honako hauek: *digute* (11v), *dioteçula* (57v), *diote* (69v), *dizquioteçun* (71r), *diotegula* (93r). **Erazan*-ekin: *draçoquete* (18v), *laçoquete* (27v), *drazquioteçu* (71r). *Egon* aditzarekin: *zaudete* (30v). *Izan*-ekin: *zayote* (53v). **Ezan*-ekin: *bezate* (68v). Bestalde, *eduki* aditzarekin objektuaren pluralgiletzat sistematikoki erabiltzen da *-zki* morfema: *baytauzqui* (10v), *dauzquiteney* (16v) *dauzqui* (42r). Caminok (2003b: 67) dioenez, «alokutiboko maskulinoko *-t-* morfema,

*-k*-ren ordain ageri zaigu aditzaren morfologian Goñerrin, Oltza zendean, Izarbeibarren, Eguesibarren, hego Esteribarren eta Aezkoan». Honen adibidetzat dakartza *xeota* 'zegoan' eta *xitxeidata* 'zitzaidaan'. Badirudi Beriainen garairako ezaugarri hori bazela, berak adibide bat baitakar: *ecin ciroquetat, ceren ençun dic* 'ezin zezakeat, zeren entzun dik' (112r).

Sintaxiaz den bezainbatez, TO-GEN egituraren erabilera nabarmena da: *gueren arimen salvaceco* (17v), *aren divina magestadearen servizaceco* (40v), *beren ardien beguiracen* (41v), *gure salvaceco conveni diraden bezala* (44r). Bestalde, azpimarratzekoa da zenbait aditzek, besteak beste *utzi*, *konbeni*, *atrebitu* aditzek, osagarritzat daramaten aditz-izenak adlatiboan duela, ez mendebalderagokoa den inesiboan: *eguitera atrebituco ez liratena* (32r), *conveni zayo egostera* (44r), *utzi tentacioan erortera* (93r).

Horrezaz landara, erlatiboak egiteko hainbat molde ditu; hauetarik bat, baina gutxien erabiltzen duena, partizipio hutsarena da: *sacerdoteac erran itzac consagraciocoac* (8r). Gainera, *-rikako* atzizkiaz ere baliatzen da erlatiboetarako: *criaturicaco* (16v), *desseaturicacoa* (42r), *inventaturicacoac* (55r), *desseaturicaco* (56v). Bestalde, erlatibozko perpausa eskuinean duten adibide ugari ditugu: *gauza eguin eta meregitu cizquigun guciequi* (16r), *Intencio eramo bear dena* (28r), *aingueru beguiracen gaytuena* (31r), *misericordia eta ondasun duçunagatic* (43r), *vicia beñere acabatuco eztena* (54r), *bigarren intencio Christo gure iaunac eramo çuena* (70v), *ene ayngueru beguiracen nauhenari* (74r), *ondasun errecebicen ditugunac* (74v), *odol enegatic ixuri cinduenas* (88v), *pena eta trabaju beynerere acabatuco eztiradenetatic* (92v), *ondasun bear dudan gucia* (95r), *vere obra eta ondasun guregatic vere vician eta heriotzean eguin cituenequi* (108r). Nolanahi ere, erlatibozkoa ezkerrean duten perpausak ere badira: *meregitu cisquigun ondasunac* (18v).

Hurrenkerari dagokionez, aipagarri dirudi *berce*-ren kokaguneak. Maiz ez da dagokion izenaren aurretik agertzen, perpausaren hasieran baizik: *berce christioac duen obligaciosco asco gauzetan* 'kristioak duen obligaziosko bertze asko gauzetan' (32r), *berce honlaco gauzaric asco* 'honelako bertze gauzarik asko'(54v), *berce conveni çayon gucia* 'konbeni zaion bertze guzia' (77r), *berce purgatorioan dauden arimac*, 'purgatorioan dauden bertze arimak' (90r), *berce honlaco obrac* 'honelako bertze obrak' (108v). Halaber, antzeko hurrenkera du *bere* posesiboak: *vere criatu çuen iaunaren contra* 'kreatu zuen bere jaunaren kontra' (39v), *vere criatu çuen iaunari* 'kriatu zuen bere jaunari' (94r-v), *vere manatu cizayona* 'manatu zitzaion berea' (111r), *vere meregitu cizquigun obra eta ondasun guciequi* 'meregitu zizkigun bere obra eta ondasun guzieki' (126r) gisako perpausetan ere *vere* ez dago dagokion izenaren aurretik, perpausaren aurretik baizik.

Horietaz gain, lokatiboa izenaren eskuinera duten adibide zenbait ditugu: *tempestade diluvioco* (17r) *martirologio Erromacoaren* (42v), *Eliza sandu Erromacoac* (76v), *libru devocioscoac* (92v), *obra misericordiascoac* (97v), *Erreguia Portugalecoa* (110r), *missale Erromacoac* (123r). *Asko* zenbatzaileari dagokionez, izenaren ezker agertzen da: *asco gauzetan* (32r), *asco gendec* (42r), *asco maneras* (44v). Bestalde, *ceimbayt* eta honek zenbatzen duenaren artean osagarriak jar daitezke: *ceimbayt harc criaturicaco gauza* (16v).

Konparaziozko perpausetan, bigarren perpausa lehenari kontrajartzen zaionean, *ecez* & *eces* partikula erabiltzen du: *sacrificioa dela aventajatuago eta obeago, eta gueyago agradacen çayona comparacioric bague, eces berce sacrificio guciac* (16v) *gueyago*

*conveni çayzquigunac, ecez mundu onetaco gauza gucia*; *garade gu pobreago, ecez munduan gueyen diradenac, baytirade poderoso* (29v).

Predikatuzko perpaus osagarrian *-tera* gisakoak erabiltzen dira: *alque duenac egitera* (55r), baina orrialde berean lehentxeago *alque duenac confessaceas*.

Moduzko perpausetan, besteak beste, *nola…bait* gisako egitura erabiltzen da: *nola baytio Concilio Tridentinoac* (9r), *nola gauza ohec gucioc baytauzqui aren divina magestadeac* (16r), *nola egonen bayllizate adicen balu* (91r).

Linschmann-Aresti legeari dagokionez, ongi betetzen duela dirudi hiru pertsonekin; dena den, *Iangoico gure iauna* moduko egituretan beti erabiltzen du arrunta. Hona bi adibide: *ala arrazio gueyago da gu gauden erreverencia eta devociorequi Iesu Christo gure iaunaren aurrean* eta *alas eta an ofrecicen diogunean eta presentacen munduaren salvaçallea Christo gure iauna* (30r).

Lexikoari eta hitzen aldaerei dagokienez, nabarmentzeko dirudite *abarasa* (*passim*); *OEH*ren arabera (s.v. *aberats*) Beriain da aldaera hori darabilen bakarra. Bestalde, nafarrak bide dira *arroytu* (30v), *astregunetan* (123v; cf. *OEH* s.v. *astelegun*), *aurquendu*, *aurquin* aldaerak. Bestalde, *baya* 'baina' (*passim*) erabiltzen da. Ekialde osoan eta Nafarroan erabiltzen diren hitz eta aldaerak dira ondotik datozenak: *bearraçaldecoac* (10v), *echeden* (124r, 124v), *eramo*, *erran* (*passim*), *fastiacen* (41r) 'fastikatu, nekatu', *heratu* (113v) 'erotu', *heri* (60r) 'hatz', *igorri* (*passim*). Beriainek *aytor* (32r) erabiltzen du 'lekuko, testigu' adierarekin, eta *ezagun* erabiltzen du aditz gisa. Gainera, *aynguiru* eta *ayngueru* bi aldaerak erabiltzen ditu. Gaztelaniazko *en voz baja* (117v) egituraren ordain gisa *vere baytan baracheco* (123r) egitura agertzen da. Amaitzeko, *ortsosas*, *oñazturac*, *ozminarri* (112r) erabiltzen dira, lehena 'trumoi' esateko, bigarrena 'tximistargia' esateko eta hirugarrena 'tximista' adierazteko.

### *2.4.1.2. Dotrina christioarena euscaras*

Lehen liburua argitaratu eta bost urte geroago, 1626an, Beriainek beste liburu erlijioso elebidun bat idatzi zuen: *Dotrina christioarena euscaras*.

Aurreko liburuaren aldean, bigarren hau apalagoa da, laburragoa izateaz gain. Bestea bezala, elebiduna da eta gaztelania hutsez ditu hasierako onespenak eta «Al lector» idazlearen hitzaurrea. Horien jarraian kristau dotrinaren gaztelaniazko testua dago 1-83 orrialdeetan; ondotik dator euskarazkoa, 84-174 orrialdeetan. Liburua gaztelaniazko «Acto de contricción» batekin amaitzen da, gorde den zatia behintzat.

Liburu honen ale bakarra ezagutzen dugu, eta *unicum*-a Aingeru Irigaraik zuen bere eskuetan. Hain zuzen ere, horren argazkietan oinarritu gara gure edizioa egiteko, eta horiek Iñaki Caminok utzi dizkigu eskuzabal. Irudietan ez dago liburua osorik. Euskarazko zatia osorik dagoela dirudi, baina gaztelaniazko dotrinaren orrialde askoren irudiak (8v-83r) falta dira. Gainera, liburuaren amaierako azken orrialdeak ertzetan puskatuta daude eta irakurketa oztopatzen dute. Aleak eskuz egindako ohar eta zuzenketak ditu; ez dakigu nork eginak diren, baina pentsa liteke Irigarai bera edo alearen aurreko jaberen bat izan zela zuzenketak egin zituena.

Liburuaren argitalpenari dagokionez, ez da oso zaindua; huts ugari ditu eta, askotan, orrialde zenbakiak ez daude ongi jarririk. Gainera, orrialderen bat ere falta dela dirudi: 123r jartzen duen orria ustez 122. orriaren ondotik badoa ere, 122v-ko

apeuan *ala* dator, baina 123r *trabaju*-rekin hasten da, aurreko orrialdetik datorren esaldiarekin loturarik izan gabe.

Koldo Mitxelena Kulturuneko artxiboan Julio Urkixoren eskuizkribu bat dago, zeinetan «Irigarai alea» deitzen duena deskribatzen eta transkribatzen baitu. Horren arabera, 14 × 6,5 cm dituen liburutxo bat da, aleak ez du azalik eta egoera txarrean dago: hainbat orrialde falta zaizkio.

Dakigula ez zuen berrargitalpenik izan, eta Pagolak (1995a) editatu zuen, aurretik hitzaurrean zenbait ohar zituela. KGn dagoen edizioa Iñaki Caminok paratu zuen.

### *2.4.1.2.1. Testua*

<84r> **Dotrina Christioarena euscaras**

Ayta gurea, ceruetan çaudena, santifica bedi çure içena. Etorri bedi çure erreñua guregana. Eguin bedi çure vorondatea çeruan bezala lurrean ere. Gure egunorosco oguia eman draçaguzu egun. Eta barca drazquiguçu gure zorrac, guc barcaçen dizquiotegun bezala gueuren zorduney. Eta ezcayçaçula utci tentacioan erorcera; aytçetic, libra gayçaçu gayzetic. Ala dela.

<84v> Erranen du, aguian, çeynbaytec eztela erran bear oracio onetan «libra gayçaçu gayçetic», bayçic «gayz gucietatic», nola auniçec erraten baytu. Bada, da gauza ciertoa eta claro dena eztela erran bear «gayçetatic», bay «gayçetic». Eta arracioa da çeren oracio hau bear da erran edoceyn lenguage motan Christo gure iaunac ordenatu çuen sentidoan berean, itçic batere añaditu eta guendu[1110] bague. Eta, ala, erraten draugu Eliza ama sanduac, bada, latines erraten dugunean, dio «*sed liberanos a malo*» eta ez «*a malis*». Eta erdaras erraten dugunean dio «*mas libranos del mal*» eta ez «*de males*». Ala, bada, euscaras erran <85r> bear dugu «gayçetic» eta ez «gayçetatic». Alaber, berçe oracioetan ioanen[1111] nayz erranes itzic baterere añaditu eta guendu bague, al daguidan guçias Elizac erraten dizquigun sentidoan berean.

Iaungoycoac salva çayçala[1112] Maria gracias betea. Iauna da çurequi. Bedeycatua çara emazten artean, eta bedeycatua da çure sabeleco frutua, Iesus. Santa Maria Iaungoycoaren ama, otoyz eguiçu gu becatariengatic oray eta gure heriotçeco orduan. Ala dela.

Sinestatçen dut Iaungoyco ayta gucis poderosoan, çeruaren eta lurraren creadorearen <85v> eta Iesu Christoren aren seme bacoyçaren, gure iaunaren baytan, çeyn conçebitu baytçen Espiritu Sanduaren obras, eta jayo çen Virgina Mariaren baytatic. Passatu çuen passio dolorescoa Poncio Pilato juezaren azpian, crucificatu içandu çen, ill çen eta orci çuten. Jaussi cen iffernuetara irurgarren egunean,[1113] illetaric resuscitatu çen. Igan[1114] çen çeruetara eta jarriric dago Iaungoyco ayta gucis poderosoaren escuyan. Eta[1115] andic etorrico

---

1110 guendu] jat. *gendu*. Guk <u> gehitu diogu *usus scribendi*-ari jarraituz.

1111 ioanen] jat. *ioanem*.

1112 çayçala] jat. *çayçalā*. Hutsa da zalantza handirik gabe.

1113 egunean] baliatu dugun alean beltzune bat dago <u> eta <n>ren artean eta badirudi letra bat egon daitekeela tatxaturik.

1114 igan] baliatu dugun alean badirudi amaierako <n> tatxaturik dagoela.

1115 eta] baliatu dugun alean eskuz tatxaturik dago.

da vicien eta illen juzgaçera. Sinestacen dut Espiritu Sandua baytan, dela Eliza sandu catholicoa, sanduen comunicacioa, becatuen barcacioa, araguiaren resurrecioa[1116] eta viçiçe seculacoa. Ala dela.[1117]

<88r>[1118] gucis poderossoaren escuyan.

Zazpigarrena, sinestatçea andic etorrico dela vicien eta illen juzgaçera. Oney, aren fedea sinestatu eta mandamentuac beguiratu dituzteney, emateco gloria eta gayztoey, çeren ezpaytuzte beguiratu aren mandamentu sanduac, emateco iffernuco seculaco penac.

Iaungoycoaren legue sanduaren mandamentuac dirade amar: lembicico irurac Iaungoycoaren honrari conveni çazquionac, berçe çazpiac proximo lagunaren provechutan diradenac.

Lembicicoa, Iaungoycoa honra eta adora deçagula.

<88v> Bigarrena, iuramenturic vanoro eztaguigula.

Irurgarrena, ygandeac eta iayac beguira diçagula.

Laurgarrena, ayta eta ama honrra dizagula.

Borzgarrena, ior ere ill eztezagula.

Seygarrena, luxuriasco becaturic eztaguigula.

Çazpigarrena, deus evatssi eztezagula.

Zorcigarrena, iori falso testimonioric erayqui eztrazogula eta ez guezurric erran.

Bedrazigarrena, lagunaren emaztea desea eztezagula.

Amargarrena, berçeren gauzaric desea eztezagula.

Amar mandamentu ohec ençerracen dirade bidatan: <89r> Iaungoycoa gauza guçien gañean oneristean eta gueuren proximo laguna gueuroc bezala.

**Eliza ama sanduaren mandamentuac dirade borz**

Lembicicoa, igandetan eta jayetan[1119] meza ossoric ençutea.

Bigarrena, urtean beyn gutienean confessaçea.

Irurgarrena, comecaçea[1120] Bazcoa garizumacoan.

Laurgarrena, baruçea Eliza ama sanduac manaçen duenean.

Borzgarrena, amarren eta primiciac ongui eguitea.

<89v> **Elizaco sacramentuac dirade çazpi**

Lembicicoa, batayaçea.

Bigarrena, confirmaçea.

Irurgarrena, penitencia.

Laurgarrena, comecaçea.[1121]

Borzgarrena, oliadura.

---

1116 resurrecioa] jat. *resurrecia*.

1117 86 eta 87 orriak falta dira baliatu dugun alean.

1118 <88r>] jat. <89> jartzen du, baina hutsa da, hurrengo orrialdean ere <89> agertzen da. Baliatu dugun alean eskuz zuzendurik dago.

1119 jayetan] jat. *jayetam*.

1120 comecaçea] jat. *começaçea*. Ik. zuzenketaren arrazoia iruzkinean.

1121 comecaçea] jat. *começaçea*. Ik. zuzenketaren arrazoia iruzkinean.

Seygarrena, ordenaçean errecebicen den sacramentua deycen bayta.[1122]
Zazpigarrena, matrimonioa.

Obra misericordiascoac dirade amalaur: çazpi corporaleac eta berce çazpi espiritualeac. Corporaleac dira ohec:
Lembicicoa, da herien visitatçea.
Bigarrena, gosse denari jatera ematea.[1123]
<90r> Irurgarrena, egarri denari edatera ematea.
Laugarrena, villosiric dagona veztiçea.
Borzgarrena, peregrinoey ostatu ematea.
Seygarrena, cautivoen rescatacea.
Zazpigarrena, illen orçiçea.

Espiritualeac dirade ohec:
Lembicicoa, eztaquienari eracustea.
Bigarrena, bearrean dagonari conseju ona ematea.
Irurgarrena, utz eguinic doayenari erratea nola doayen gayzqui, eta hura utçiric ongui eguin dezan erratea.
<90v> Laurgarren, iniuriac barçaçea.
Borzgarrena, tristeac consolaçea.
Seygarrena, paciencias sufriçea proximo lagunaren faltac.
Çazpigarrena, viçiengatic eta illengatic Iaungoycoari otoyz eguitea.
Becatu mortaleac dirade çazpi:
Lembicicoa, sobervia.
Bigarrena, avaricia.
Irurgarrena, luxuria.
Laurgarrena, ira.
Borzgarrena, gula.
Seygarrena, imbidia.
Çazpigarrena, pereza.

<91r> Zazpi becatu mortale ohen contra diraden virtuteac eta ondasunac dirade ohec:
Soberviaren contra humildadea.
Avariciaren contra liberal içatea.
Luxuriaren contra castidadea.
Iraren contra paciencia.
Gularen contra iatean eta edatean templatu içatea.
Imbidiaren contra caridadea.
Perezaren eta arloteriaren contra, diligente, Iaungoycoaren serviçuan içatea.

[1122] Esaldia amaitu gabe bide dago; jarraian eskuz norbaitek *apezte* gehitu du baliatu dugun alean.
[1123] <90r>] jat. <87> jartzen du, baina gaizki bide dago.

<91v> Arimaren etssayac dirade irur:
Lembicicoa da demonioa.
Bigarrena mundua.
Irurgarrena araguia.

Arimaren potenciac dirade irur:
Lembicicoa, memoria.
Bigarrena, entendamentua.
Irurgarrena, vorondatea.

Sentido corporaleac dirade borz: icustea, ençutea, urrin eguitea, gustaçea, uquiçea.

<92r> Virtuteac eta ondasunac bear ditugunac içan dirade çazpi: irur teologaleac eta laurac cardenaleac.

Teologaleac dirade ohec:
Lembicicoa, fedea.
Bigarrena, esperança.
Irurgarrena, caridadea.

Cardinaleac dirade ohec:
Lembicicoa, prudencia.
Bigarrena, iusticia.
Irurgarrena, fortaleza.
Laurgarrena, templança.

<92v> Espiritu Sanduaren doayac dirade çazpi:
Lembicicoa, sabiduriaren[1124] doaya.
Bigarrena, entendamentuaren doaya.
Irurgarrena, consejuaren doaya.
Laurgarrena, fortalezaren doaya.
Borzgarrena, iaquitearen doaya.
Seygarrena, piedadearen doaya.
Çazpigarrena, Iaungoycoaren beldurraren doaya.

<93r> Espiritu Sanduaren frutuac, çeñetatic atraçen baytirade arbole batetic frutua bezala, dirade amavi: caridadea, gozo eta contentu arimarena, baquea, paciencia, liberalidadea, ondasuna, mansedumbrea, fedea, modestia, continencia, castidadea.

Bienaventuranzac dirade zorçi:

Lembicicoa: bienaventuratuac dirade <93v> pobre viotçes eta vorondates diradenac, çeren ayena bayta çeruco erreñua.

Bigarrena: bienaventuratuac dirade mansoac, ceren ohec gozatuco dute lurra.

---

[1124] sabiduriaren] jat. *sabiduaren*.

Irurgarrena: bienaventuratuac dirade nigar eguiten dutenac, çeren ohec içanen dirade consolatuac.

Laurgarrena: bienaventuratuac dirade justicia deseaçen dutenac, çeren ohec içanen dirade aspertuac.

Borzgarrena: bienaventuratuac dirade misericordiosoac, çeren ohec erdetsico dute misericordia.

Seygarrena: bienaventuratuac dirade biotzac garvi dituztenac, çeren ohec icusico dute Iaungoycoa.

<94r> Zazpigarrena: bienaventuratuac dirade baques diradenac, çeren ohec içanen dirade deytuac Iaungoycoaren semeac.

Zorçigarrena: bienaventuratuac dirade justiciarengatic perseguituac diradenac, çeren onlacoendaco da çeruco erreñua.

Becatu venialea barcaçen da bedrazi gauza ohen bates:

Lembicicoric: meza devociorequi ençuteas.

Bigarrena: dignoro comecaçeas.[1125]

Irurgarrena: Iaungoycoaren itça enzuteas.

Laurgarrena: ipispicuaren bedeycioas.

<94v> Borzgarrena: Ayta gurea errateas.

Seygarrena: confessio generala errateas.

Çazpigarrena: hur bedeycatuas.

Zorçigarrena: ogui bedeycatuas.

Bedraçigarrena: bularretan vere becatues damu eta urriquimentu duela golpe emateas.

Guizonaren azqueneco gauzac dirade laur:

Lembicicoa: heriotçea.

Bigarrena: iuyzioa.

Irurgarrena: iffernua.

Laurgarrena: gloria.

## <95r> **Confessio generala**

Ni, becatari au, confessaçen nayçayo Iaungoyco gucis poderosoari, andre dona Maria beti virginari, Ioandone Miquel ayngueruari, Ioandone Ioanis bautistari, Ioandone Petri eta Paulo apostoloey eta sandu guciey eta çuri, ayta confessore orri, neure[1126] becatu eguines, erranes, pensatues. Enea da culpa, enea da culpa, enea da culpa gucis andia. Argatic, otoyz eguiten draucot andre dona beti virginari, Ioandone Miquel ayngueruari, Ioandone Ioanis bautistari, Ioandone Petri eta Paulo apostoloey eta sandu guciei eta çuri, ayta confessore orri, çaraten Iaungoycoaren aurrean ene otoyzguille.[1127]

---

1125 comecaçeas] jat. *começaçeas*. Ik. zuzenketaren arrazoia iruzkinean.

1126 neure] jat. *neuru*.

1127 otoyzguille] jat. *otoizguiſſe*.

<95v> **Lembicico capituloa**

**ceñetan adiçera ematen bayta çeyn den christioaren señalea eta credoan diraden misterioac**

Maystruac galdeguiçen du «Christioa çarade?»

Discipuloac respondaçen du «Bay, Iesu Christo gure iaunaren gracias».

G. Cer erran nay du «Christioa»?

R. Iesu Christoren fedea, batayatu çenean confessatu çuena, duena.

G. Nor da Iesu Christo?

<96r> R. Iaungoyco eta guiçon eguiascoa.

G. Ceyn da christioaren señalea?

R. Gurutçe sandua.

G. Cerengatic?

R. Cerengatic gurutçe sanduan Christo gure iauna gurucificatu içandu baycen, gu becatutic eta iffernutic libraçeagatic.

G. Cembat motas ussatçen du christioac señale onesas?

R. Bi motas.

G. Ceyn dirade orihec?

R. Irur gurutçe eguitea escuyeco beaz andias: lembiçicoa becoquian, bigarrena agoan, irurgarrena bularretan, minçaçen dela Iaungoycoarequi.

G. Eracutsi çazu nola?

<96v> R. Gurutçe sanduaren señaleagatic, gure etsayetatic libra gayçaçu, Iaungoyco gurea.

G. Cerengatic eguin duçu gurutçearen señalea becoquian?

R. Ceren libra gayçan Iaungoycoac pensamentu gaystoetatic.

G. Cerengatic eguiten duçu agoan?

R. Ceren libra gayçan Iaungoycoac itz gaystoetatic.

G. Cerengatic eguiten duçu bularrean?

R. Ceren libra gayçan Iaungoycoac obra eta deseo gaystoetatic.

G. Cer da señatçea?

R. Eguitea escuyeco escuas gurutçearen señalea; assi becoquitic eta bularretaño; <97r> eta guero, alaver, passaçen dituela heriac ezquerreco soñetic escuyetaco soñera. Trintate gucis sandua, confessaçen dugula dela Iaungoyco bat eta irur persona.

G. Eracutsi çaçu nola?

R. Aytaren eta Semearen eta Espiritu Sanduaren içenean.

G. Cerengatic eguiten da gurutçearen señale hau?

R. Lembicicoric eguiten da daquigun garadela christioac,[1128] eta, ala, Christo gure iaunaren soldadoac, çeren gurutçearen señalea da librea eta señale bat christioarena ceñes eçagutçen baytirade christioac eta diferenciaçen Eliza sanduaren contra diraden etsayetatic, nola baitirade turcoac eta berce <97v> gende mota onlaco guciac.

G. Eta cergatic gueyago?

---

1128 christioac] erabili dugun alean eskuz tatxaturik dago <c>.

R. Ceren gurutçe sanduaren señalea eguiten dugunean, escaçen diogu Trintate iaun poderosoari digun sabore eta lagun daquigun gueuren obra gucietan Iesu Christo gure salvadorearengatic. Çeren, aren medios, libraçen garade gaiz gucietatic eta erdesten ditugu ondasun guciac. Eta, ala, acostumbraçen dute christio onec eguitera gurutcearen señalea ohatcetic jayquicen diradenean, echetic atraçen diradenean, mayan jarritcen diradenean, ohatcera doacenean eta edoceyn gauza bat assi bear dutenean.

G. Cerengatic ambat aldis?

<98r> R. Demonioaren tentacioetatic libraceagatic, ceñec denvora gucietan eta lecu gucietan perseguiçen baycaytu, procuracen duela al daguien calte gucia eguitera.

G. Cergatic gueyago?

R. Cerengatic señale onequi lotçacen da demonioa, eta igues eguiten du nola ladronec eta gayzqui eguiten dutenec igues eguiten baytute icusi deçatenean justiciaren vara.

G. Eta cergatic gueyago?

R. Cerengatic auniz aldis gurutce sandu onen señaleagatic libracen dira guiçonac peligro anizetatic,[1129] ala arimaren nola gorpuçaren contra diradenetatic, eguiten dela confiançarequi <98v> Iaungoycoaren misericordian eta Iesu Christo gure iaunaren meregimentuetan, ceñetan nay içandu bayçuen ill gure amoreagatic.

G. Christo gure iauna adoraçen duçunean gurutcean nola erraten duçu?

R. Adoratçen çaytugu, Christo gure iauna, eta bedeycaçen çaytugu, ceren gurutçe sanduan erredemitu içandu baytuçu mundua.

G. Eta gurutçea solla adoratçen duçunean, nola erraten duçu?

R. Adoratçen çaytut, gurutçe bedeycatua, çeñetan ene erredentore iauna guruçeficatu içandu bayçen.

G. Ya icusi dugu nola çaraden christioa, erran draçadaçu[1130] certaco criatu çuen <99r>[1131] Iaungoycoac guiçona?

R. Criatu çuen guiçona eçagu çeçan criatu çuen iauna eta Iaungoycoa; eta eçaguturic, serviça çeçan eta, ala, arças goza ceçan, ceren eçagutcen eztuenac eta ez serviçaçen, eztu erdetsico gloria; aycetic, condenatua içanen da iffernuco penetara erremedioric bague.

G. Orlatan, principalquiro eta cuydado gueyagorequi guiçonac procuratu bear duena da salvatceco conveni çayzquion gauzac eguitera?

R. Ala da eguia, ceren guiçonari gueyen conveni çayona da Iaungoycoaren serviçacea eta, ala, salvacea, ceren ez salvaceco obeago içanen cen jayo içandu ezpaliz.

<99v> G. Erran drazadazu cembat gauza christioa den obligatu jaquitera, arracios ussatcera etorris guero ceruco gloria erdesteco?

R. Laur gauza.

G. Ceyn dirade orihec?

---

1129 anizetatic] jat. *onizetatic*.

1130 draçadaçu] jat. *draçaduçu*.

1131 <99r>] jat. <101>. Hutsa da zalantzarik gabe; eskuz zuzendurik.

R. Lembicicoa: jaquin bear du çer bear duen sinestatu. Bigarrena: çer bear duen eguin. Irurgarrena: çer oracio erran bear duen eta nori. Laurgarrena: çer sacramentu bear duen errecebitu.

G. Norc[1132] daqui çer bear duen sinestatu?

R. Credoa edo articulo fedescoac daquizquienac.

G. Norc daqui çer otoyz eguin bear duen eta çer oracio erran bear duen?

R. Ayta gurea daquienac <100r> eta berce Elizaco oracioac.

G. Norc daqui çer obrac eguin bear dituen eta ceñetatic bear duen apartatu?

R. Iaungoycoaren legue sanduco mandamentuac eta Elizarenac daquizquienac.

G. Norc daqui çer bear duen errecebitu?

R. Sacramentu sanduac daquizquienac.

G. Orlatan, obligatu da christioa gauza ohec jaquitera eta adicera?

R. Bay, jauna. Ceren ecin cumpli deçaquegu gueuren obligacioarequi jaquin ezpadezagu.

G. Alas eta erran duçunean lembicico gauza christioa obligatu dena jaquitera dela fedesco gaucac, erran draçadaçu cer den fedea.

<100v> R. Fedea da icusten eztitugun gauzac diradela eguiac sinestacea, çeren Iaungoycoac baytio ala diradela.

G. Icusten duçu çuc Iaungoycoa? Eta, nola den irur persona eta Iaungoyco bat?

R. Ez, iauna.

G. Icusi cinduen çuc illcen Iesu Christo? Eta, nola erresucitatu çen illetaric irurgarren egunean? Eta, guero nola igan çen çeruetara eta dagola jarriric bere aytaren escuyetaco aldean?

R. Ez, baya sinestatcen dut icusiric baño obequiago.

G. Ceren icusi bague sinestatcen duçu ayn firmoquiro?

R. Cerengatic Iaungoycoac baytio fedesco gauzac ala diradela. Eta daquit ciertoquiro <101r>[1133] eçe ecin Iaungoycoa engaña ditequela eta ecin ior ere engaña dezaquela.

G. Nondic daquiçu çuc Iaungoycoac diola ala diradela?

R. Daquit Eliza ama sanduac, ceñey Espiritu Sanduac maystruac bezala eracutsiric, erraten baytit[1134] ala diradela gauza ohec eguiac. Eta badaquit eçe ecin Eliza sandua engaña ditequela fedesco gauzetan. Eta, ala, seguroquiro sinestatcen dut arc sinestatcen dituen gauza guciac.

G. Eta ceyn bear da sinestatcea fedesco gauzac salvaceco?

R. Ambat, eçe hau bague ecin ihorc ere erdesi deçaque gloria.

G. Nola jaquinen dugu çer <101v> bear dugun sinestatu?

R. Aditcen dugula ongui credoan edo articulo fedescoetan dauden misterioac.

G. Credoa eta articulo fedescoac dirade gauza bat?

R. Bay, jauna.

---

1132 Norc] jat. *Nor*.

1133 <101r>] jat. <103>. Hutsa bide da; eskuz zuzendua.

1134 baitit] jat. *baitic*.

G. Erran eçaçu credoa.
R. Sinestacen dut Iaungoyco ayta gucis poderosoan, erran den bezala.
G. Norc eguin çuen credoa?
R. Apostoloec.
G. Certaco?
R. Guri eracusteco cer bear dugun sinestatu cerura ioateco.
G. Eta guc certaco erraten dugu?
R. Fedea confessatceagatic eta artan firmoago egoteagatic.
<102r> G. Erran içaçu articulo fedescoac.
R. Articulo fedescoac dirade amalaur, erran den bezala.
G. Cer dirade articulo fedescoac?
R. Fedesco misterio principalenac.

G. Erran cinduen lembicico articulo fedescoa dela sinestatcea dela Iaungoyco eguiasco bat. Nor da Iaungoycoa gure iauna?

R. Da iaun bat ondasun guciac dituena, gauza guciac daquizquiena, nay duen gucia eguin dezaquena, gauza gucien criaçallea eta conservaçallea, ceñec[1135] ezpaytu ioren necessidaderic, eta guciei bay arendaco alaco maneras eçe ecin ior ere manea lite dagon lecutic eta ecin iolaco maneras <102v> vici lite puntu bates iaun hau lagun ezpalequio.

G. Iaungoycoa da persona bat solamente?
R. Ez, jauna, baycic irur.
G. Ceyn dirade?
R. Ayta eta Semea eta Espiritu Sandua.
G. Ayta Iaungoycoa da?
R. Bay, jauna.
G. Semea da Iaungoycoa?
R. Bay, jauna.
G. Espiritu Sandua da Iaungoycoa?
R. Bay, jauna.
G. Dira irur Iaungoyco?

R. Ez, baycic Iaungoyco bat. Eta Iaungoyco hau da Ayta eta Semea eta Espiritu Sandua. Eta, ala, dira irur persona eta Iaungoyco bat, çeren irur personec baytute sustancia bat eta essencia bat.

G. Ayta da semea?
<103r> R. Ez, jauna.
G. Espiritu Sandua da Ayta edo Semea?

R. Ez, jauna. Ceren irur persona ohec, Ayta eta Semea eta Espiritu Sandua, dirade irur persona differente, baya nola irur persona ohec baytute essencia bat eta sustancia bat, argatic dirade Iaungoyco bat.

G. Orlatan, irur persona ohec dute vorondate bat, jaquite bat eta podore bat?

R. Ala da eguia. Alaco maneras eçe Aytac nay duena nay du semeac eta Espiritu Sanduac. Aytac eguiten duena eguiten du Semeac eta Espiritu Sanduac.

1135 ceñec] jat. *ceñeac*.

G. Orlatan, ezta persona bata poderosoago bercea baño, eta ezta bat leen <103v> bercea baño?

R. Ala da eguia, ceren irur personec baytute essencia eta sustancia bat. Eta, ala, dirade gauza gucietan igoal.

G. Nola da Iaungoycoa gucis poderosoa?

R. Ceren nay duen gucia eguiten baytu, eta asco da nay içatea eguiteco.

G. Nola da Iaungoycoa gauza gucien criaçallea?

R. Ceren gauza guciac eguin içandu baytitu ez deusetatic.

G. Nola da Iaungoycoa salvaçallea?

R. Ceren Iaungoycoac ematen digu gracia eta barcaçen dizquigu becatuac.

G. Cerc movicen du Iaungoycoa ematera guri bere gracia?

<104r> R. Bere misericordia eta ondasun andiac, eta Iesu Christo gure iaunaren meregimentuec.

G. Cer da gracia?

R. Iaungoycoaren adisquidetasun bat, eguiten baycaytu Iaungoycoaren semeac eta herederoac ceruco gloriarendaco.

G. Cer maneras erdesten da gracia? Eta, erdetsis guero artan aylcina gaytezque?

R. Iaungoycoari otoyz eguines bere misericordia eta ondasun andiagatic[1136] eta Iesu Christo gure iaunaren meregimentuengatic eman drazagun, eta sacramentu sanduac ongui errecebicen ditugula eta obra onetan empleacen garadela.

<104v> G. Nola da Iaungoycoa glorificaçallea?

R. Cerengatic ematen baytu gloria aren gracian illçen denari.

G. Purgatoriora doazenac nor dirade?

R. Iaungoycoaren gracian illcen diradenac, baya beren becatuengatic çor çuten pena gucia pagatu bague.

G. Badu Iaungoycoac gorputcic guc[1137] bezala?

R. Ez divinidadeas becambates. Ceren da espiritu solla, gorputcic batere bague, baya bay guiçon becambates.

G. Ceyn persona iruretatic eguin ce guiçon?

R. Bigarrena, bayta Semea.

G. Ayta eguin cen guiçon?

R. Ez, jauna.

<105r>[1138] G. Espiritu Sandua eguin ce guiçon?

R. Ez, jauna, baycic solamente Semea.

G. Nola Iaungoycoaren semea, içanica Iaungoycoa, eguin ce guiçon?

R. Arturic gorputça eta arima, arracios ussatcen duena, milagro eguinican Espiritu Sanduaren obras.

G. Cer milagro içandu cen ori?

R. Milagroa içandu ce gucis andia, cerengatic Espiritu Sanduac, bayta Iaungoyco bat Aytarequi eta Semearequi eta, ala, eguin bayteçaque nay duen

---

1136 andiagatic] jat. *andiogatic*.

1137 guc] jat. *gue*.

1138 <105r>] jat. <107>.

gucia. Virgina andre dona Mariaren sabelean, aren odol garvias eta sanduas, formatu çuen aurraren gorpuz bat gucis <105v> galanta eta ederra. Eta puntu artan berean criatu çuen arima bat gucis preciosoa eta ona. Eta juntatu çuen aurraren gorpuçarequi. Eta Iaungoycoaren semeac gorpuça eta arima juntatu cituen puntu eta instante artan berean berequi. Eta, ala, leen Iaungoycoaren semea ezpaycen baycic Iaungoycoa, juntatus guero gorpuçarequi eta arimarequi, da alaber guiçon eguiascoa. Eta hau[1139] erran nay du Iaungoycoaren semea Christo gure iauna guiçon becambates concebitu cela Espiritu Sanduaren obras bere ama andre dona Mariaren sabelean.

G. Nola dariço Iaungoycoaren <106r> semeari, guiçon eguin cenari?

R. Iesu Christo munduaren salvaçallea.

G. Cerengatic eguin cen guiçon Iaungoycoaren semea?

R. Guregatic illceagatic eta exemplo emateagatic, cerengatic guiçon eguin ezpaliz ecin ill çatea.

G. Nola jayocen da[1140] ama Virginarenganic?

R. Iaungoycoac milagro eguinic nola eguin içandu bayçue concebitu çuenean, çeren Iaungoycoac nay duen gucia eguin deçaque, eta ezta gauza dificultosoric arendaco. Eta, ala, virgina andre dona Maria erdi içandu cen virginica cegola erdi baño <106v> leen eta erditcean eta erdis guero beti virginic.

G. Cer erran nay du «Iesu Christoc padecitu eta sufritu çuen passioa Poncio Pilato juezaren azpian, gurutceficatu çuten, ill cen, ortci[1141] çuten»?

R. Erran nay du eçe Christo gure iauna munduan conversaturic casic oguey eta amayrur urte eta eracutsiric vere vicias, exemploas eta dotrinas guciey ceruco videa, auniz milagro eguinica eta ondasun, Poncio Pilatosen manus, baytcen orduan Iudeaco governadorea, justiciaren eta arracio guciaren contra açotatu çuten, eta gurutce batean escuetan eta oñetan iltces jossiric ill içandu cela.

<107r>[1142] G. Erran draçadaçu,[1143] alas eta denean gauza ciertoa Iesu Christo gure iaunac etçuela becaturic batere, eta ecin içan ere iolaco maneras, eta nay içandu balu[1144] libratu bayçatea Pilatosen escuetatic eta berce gucienetatic, nola nay içandu çue ill gurutce batean, iltces escuac eta oñac jossiric ambat, dolore eta trabajurequi?

R. Eguia da eçe Christo gure iaunaren baytan etcela becaturic batere, eta ecin çuquela iolaco maneras. Eta, alaber, da gauza ciertoa eçe nay içandu balu libratu çateala Pilatosen escuetatic eta mundu gucicoetatic ere, baya nay içandu çue ill gu becatuetatic eta iffernuco trabaju ayn andietatic <107v> libraceagatic.

G. Alas eta Christo gure iauna ill içandu cenean guri gueuren becatuac barcaceagatic eta ayengatic çor guinduen çorra pagaceagatic eta gu gucioc iffernutic libraceagatic, nondic dator condenatcen baytirade ambat gende?

---

1139 hau] hutsa dela dirudi, ergatiboa behar bailuke.
1140 jayocen da] jat. *jayocea*.
1141 ortci] jat. *oritci*.
1142 <107r>] jat. <109>.
1143 draçadaçu] jat. *draçaduçu*.
1144 balu] jat. *betu*.

R. Eguia da eçe iaun onec bere trabajues eta heriotceas pagatu duela gucien becatuengatic, baya nay du bapedra aprovecha dedin[1145] aren heriotce sanduas, bere partetic eguiten duela penitencia bere becatues eta onetaco ordenaturic dauzquien sacramentuac ongui errecebi diçan. Argatic, baldin baliotuco baçaygu, aren passio sandua bear dugu gueuren <108r> partetic aprovechatu, arças[1146] eguiten dugula penitencia eta obra onac eta gaystoetatic apartatu.

G. Nay nuque oray erran duçun ori nola den cindidan adicera ceymbat semejanças?

R. Placer baytut. Eguin deçagun contu guiçon batec bere icerdias eta trabajuas erabaci duela diru asco, dena ciudade batean diraden zor gucien pagaceco. Eta diru hau gucihau eçarçen duela mercatari baten echean eman daquioten aren escutic dramateney cedula eta claredadea cer zor duten. Guiçon onec dudaric batere bague, bere partetic den becambates, eman <108v> du zor duten gucien cantidadearen pagatceco. Guciarequin ere zor duten ohetatic batec edo bidac edo gueyagoc ezpalute joan nay, batçuec[1147] sobervias bertcec arloterias edo berce causas, arengana cedularen esque, ez nayes bere zor duena descubritu, onlacoec bere faltas ez lituzquete bere zorrac pagatuco. Ala, bada, Christo gure iaunac bere passio passatu çuenas eta heriotceas pagatu çuen guc gueuren becatuengatic zor guinduen gucia cumplituquiro. Eta gueyago bay nay du iaun onec guc gueuren partetic dugun damu becatu eguines eta aurrera becatuetatic aparta gaytecen eta errecebi diçagun sacramentu <109r> sanduac ongui eta videro, conveni den bezala, eguiten dugula gueuren becatues penitencia eta ayetatic apartaturic obra onetan emplea gaytecen. Eta nola gauza ohec ezpaytituzte aunizec eguiten, argatic auniz dirade condenacen diradenac bere faltas.

G. Erran duçu Christo gure iauna illes guero jaytci cela iffernuetara, çer adicen duçu iffernuetara erraten duçunean?

R. Erran nay dut eçe içanagatic lurpean laur lecu, deycen baytirade iffernuac, nora joaten baytirade illcen diraden arimac cerura doazenes landara, ohetatic beytiena eta ceruetatic urrutien dagona, non baytirade <109v> demoniac[1148] eta becatu mortalean illcen diraden desdichatuac, dela iffernua. Bigarren lecua da guti bat goytiago bayta purgatorioa, nora joaten baytirade justoen arimac, aren gracian illcen diradenac, baya beren becatuengatic zor zuten zorra pagatu bague. Irurgarrena baytago goytiago, nora joaten baytirade aurren arimac, batayatu bague illcen diradenac, ceñec ezpaytute beñere Iaungoycoa icusico. Laurgarren lecua, bayta gucietatic goytien dagona, da non bayceude patriarca eta profeta eta berce sanduen arimac, ill içandu baytirade Christo gure iauna ill baño leen, eta lecu onetara erran nay dut jayci <110r> cela eta andic libratu cituela arima sanduen ceudenac.

---

1145 dedin] jat. *decin*.

1146 arças] jat. *arcas*.

1147 batçuec] jat. *batçuce*. Ezkerreko ertzean eskuz zuzendua.

1148 demoniac] hemen *demoniac* eta aurrerago *demonia* (122r) ditugu, biak hutsak izan litezke; oro har *demonio* erabiltzen baitu gainerako guztietan.

G. Nola jaytci içandu çen?

R. Christo gure iaunaren arima jaytci cen divinidadearequi.

G. Orlatan Christo gure iaunaren gorpuça etcen jaytci iffernuetara?

R. Ez, jauna. Ceren gorpuça guelditu cen gurutçean divinidade berarequi eta edequiric iltceac, ceñes baitcego jossiric gurutçean escuetan eta oñetan, eraici çuten gurutcetic eta ortci çuten ovia batean.

G. Nola erresucitatu cen irurgarren egunean?

R. Ceren irurgarren egunean Iesu Christo gure iaunaren arima juntatu cen bere <110v> gorpuçarequi eta erresucitatu cen gloria eta magestade andiarequi ez gueyagoric illceco.

G. Cer causas erraten da Iesu Christo erresucitatu[1149] çela eta bertce illengatic erraten da erresucitatu içandu diradela?

R. Ceren Iesu Christo da Iaungoycoaren semea. Eta, ala, bere podores eta virtutes juntatu çuen bere arima bere gorpuçarequi eta assi cen berriro vicicen. Baya berce illen arimac ecin bere podores eta virtutes junta ditezque beren gorpuçequi, baycic Iaungoycoac bere podore eta virtute andias. Argatic erraten dugu «Christo gure iauna erresucitatu cen» eta berce illengatic <111r> «Erresucitatu içandu cirade», nola gu gucioc Iaungoicoac erresucitatuco baycaytu juycioco egunean.

G. Nola igan çen ceruetara?

R. Nola bayta Christo gure iauna Iaungoyco eta guiçon bere virtutes, igan cen ceruetara.

G. Cer erran nay du Iesu Christo dagola jarriric Iaungoico ayta gucis poderosoaren escuyan? Erran nay du, aguian, semea dagola escuyetaco aldean eta ayta dagola erdian eta Espiritu Sandua ezquerretaco aldean?

R. Ez, jauna. Ezta orla aditu bear, ceren Ayta eta Semea eta Espiritu Sandua, nola baytirade Iaungoyco bat, <111v> daude lecu gucietan junto eta ecin aparta ditezque. Eta, ala, ecin erran diteque «Persona bat dago escuietaco aldean eta bercea erdian eta bercea ezquerreco aldean».

G. Nola, bada, adicen duçu dagola jarriric bere aytaren escuyan?

R. Erran nay du eçe Christo gure iaunac, Iaungoyco den becambates, duela Aytac duen gloria eta magestadea bera, eta guiçon becambates duela ayngueruec sandu eta sanda guciec baño gueyago.

G. Por ventura, Christo gure iauna ceruas landara badago ion ere bercetan?

R. Iaungoyco den becambates dago lecu gucietan, <112r> baya guiçon beçambates ceruan dago solamente, eta hau berhau dago aldareco sacramentu sanduan.

G. Orlatan, comecaçen[1150] diradenec iaun hau berhau errecebicen dute?

R. Ala da eguia.

G. Cer erran nay du «Nondic etorrico bayta illen eta vicien juzgatcera»?

R. Erran nay du ece, nola erran baytut, Iesu Christo igan cela çeruetara eta dagola ayta eternoaren escuyetan. Andic etorrico dela gucien juzgatcera

---

[1149] erresucitatu] jat. *eresucitatu*.

[1150] comecaçen] jat. *começaçen*. Ik. zuzenketaren arrazoiak iruzkinean.

gloria eta magestade gucis andiarequi, virgina andre dona Mariac, ayngueru eta sandu guciec acompañacen dutela, eçe guciec dudaric bague eçagutuco <112v> baytute hura da Iesu Christo, nola iguzquia atracen denean dator ambat arguitasunequi, eçe guciec claroquiro eçagucen baytute hura dela iguzquia eta ez berce gauzaric.

G. Noyz içanen da juzgatcera etorce ori?

R. Ecin ihorc ere jaquin deçaque dagon urbil edo urruti egun hura, Iaungoycoac daqui solamente. Guc daquiguna da etorrico dela mundua acaba dedinean.

G. Eta acabatuco da mundua?

R. Bay, jauna.

G. Cer fin içanen dute eta certara etorrico dirade ambat obra jaureguietan eta echetan eguinic daudenac eta berce gauza munduan <113r> diraden guciac?

R. Mundu onetaco gauza guciac erreco eta chispilduco ditu su batec, atraco bayta munduco laur partetaric, içanen da ayn andia, ayn poderosoa, eçe ezpayçayo escapatuco gauzaric baterere.

G. Cer adicen duçu erraten duçunean credoan dela Eliza sandua catholicoa? Cer erran nay du «Elizac»?

R. «Eliza» erraten dudanean nay dut erran diradela christioac, ceñec baytirade junto eta conforme sinestatcean fedesco gauzac, ceñen burua bayta Ayta Sandua, hau da Eliza.

G. Cembat gauza bear dirade junta onetaco, erran nay dut Christioa içateco?

<113v> R. Irur gauza. Lembicicoa: bear du içan batayatua, ceyn bayta Eliza onetaco ataria. Bigarrena: bear du sinestatu fedesco gauzac eta confessatu Christo gure iaunaren leguea, nola Eliza onetaco artçayec eta predicaçallec eracusten baytigute. Irugarrena: bear da içan obedientea Ayta Sanduarendaco, ceren bayta Iesu Christoren lecuan dagona eçagutcen dugula dela gucien burua.

G. Baldin Eliza bada christioac, oray erran den bezala, nola deycen ditugu elizac arris eguinic daudenac, non erraten bayta meza eta eguiten Iaungoycoaren oficioac?

<114r> R. Ceren christio fielac Elizaco diradenac juntatcen baytirade ayhetan meza ençutera eta predicuac, oracio eguitera, confessacera eta comecacera, baya guc erraten dugunean credoan «Sinestatcen dut dela Eliza catholicoa», ezcara minçacen arris eta çures eguinic daudenes, baycic christio fieles, batayatues, Ayta Sanduaren obediente diradenes, leen erran dudan bezala.

G. Cerengatic erraten da Eliza dela bat solamente, alas eta munduan denean ambat gende mota christioac diradenac eta ambat lecutan?

R. Ceren guciec baytute buru bat solamente, <114v> bayta Iesu Christo, eta aren lecuan Ayta Sandua. Bay eta ceren munduan diraden christio guciec sinestacen eta confessatcen dute fede bat solamente, eta guciec dute legue bat, ala nola erresuma[1151] edo erreñu batean, ceñetan solamente bayta erregue bat

---

[1151] erresuma] jat. *eresuma*.

eta legue bat erraten da dela solamente bat, artan içanagatic auniz provincia, ciudade eta villa.

G. Cer erran nay du «Sanduen comunioa»?

R. Erran nay du eçe christioac egonagatic ayn aparte batac berceanganic, eta ez eçagutuagatic ercal, alaco maneras daudela juntaturic fedearen eta obra onac eguiten dituzten virtutes, eçe baytute parte eta provechu <115r> batec bercen ondasunetan, ayhec guretan eta guc ayhenetan, nola bayta meza erraten diradenetan, oficio eta oracioetan, eta berce ondasun eguiten duten gucietan.

G. Eta, alaver, meza christio gucien ertean erraten diradenac, eta ondasun eguiten diraden guciac aprovechatcen çayzquiote purgatorioan dauden arimey?

R. Alaver, aprovechatcen çayzquiote purgatorioan dauden arimey.

G. Eta Iaungoycoas gozatcen dauden sanduen oracioac aprovechatcen çayzquigu guri eta purgatorioan dauden arimey?

R. Bay, jauna, eta auniz.

G. Cer erran nay du becatuen <115v> barcacioac?

R. Erran nay du eçe Elizan dela ondasun bat andia eta consuelo anditacoa becatariendaco, eçe munduan den andiena içanagatic bere partetic Ioaungoycoaren favorearequi eguiten duela arc nay duena, barcatuco dizquiola bere becatu guciac alaco maneras ece gueros içanen bayta Ioaungoycoaren adisquidea.

G. Eta Elizatic landara, barcacen dirade becatuac?

R. Ez, jauna, iolaco maneras.

G. Cer erran nay du «Araguiaren erresurreccioa»?

R. Erran nay du eçe persona gucioc, ala onac nola gaystoac, erresucitatuco <116r> garadela.

G. Cer erran nay du «Erresucitatuco garadela»?

R. Erran nay du eçe Iaungoyco gure iaunac bere podore andias eguinen duela bapedraren arima illes guero berriro junta dedin bere leen vici cenean çuen gorpuçarequi eta, ala, içulico garadela berriro vicicera.

G. Noyz içanen da ori?

R. Iuyzioco egunean.

G. Eta cergatic orduan?

R. Ceren nola vici guinanean arimarequi eta gorpuçarequi junto, eguin bayquinduce obra onac edo gaystoac, nay du Iaungoycoac aguer gaytecen aren aurrean juycioco egunean sentenciaren <116v> ençutera eta errecebicera gorpucean eta ariman junto, eguin guinducen obren conforme edo premioa edo castigoa.

G. Cer emanen diote oney?

R. Gloria.

G. Eta cer emanen diote gaystoei?

R. Iffernuco beñere acabatuco eztiraden penac eta trabajuac.

G. Ceyn içanen dirade onac?

R. Onac içanen dirade Iesu Christoren fede sandua, christioec sinestatcen duguna, sinestatu dutenac eta Iaungoycoaren mandamentuac eta Elizacoac begiratu dituztenac.

G. Ceyn içanen dirade gaystoac?

<117r> R. Ayhec ceñec ezpaytute sinestatu christioec sinestacen dugun fedea, edo sinestatuagatic ezpaytute beguiratu Ioaungoycoaren mandamentuac eta ez Elizarenac.

G. Orlatan, erran draçadaçu cembat gauza bear diraden gloria erdesteco?

R. Bi gauza. Lembicicoa: sinestatu Eliza sanduac sinestatcen dituen fedesco gauzac guciac eta onequi batean. Bigarrena bear dena da beguiratu Iaungoycoaren mandamentuac eta Elizarenac, eçe onla erdesten da ceruco gloria.

G. Orlatan, infielac eta heregeac ezpaytute sinestatcen Eliza ama sanduac sinestacen dituen fedesco gauzac, <117v> condenacen dirade?

R. Da gauza ciertoa fedeac eracusten diguna eçe ohec gucioc ill eta bereala doacela iffernura erremedioric batere bague.

G. Eta christioac ceñec beti sinestatu baytute Eliza sanduac sinestacen dituen fedesco gauza guciac, baya vici içandu dirade gayzqui eta ill içandu baytirade penitencia bere becatues eguin bague becatu mortalean daudela, oen arimac nora doaz?

R. Alaver, gure fede sanduac eracusten digu ohec gucioc doacela iffernura, ceren fedea solla ezta asco gloria erdesteco, baycic fedearequi batean bear dirade eguin obra onac erran den bezala.

G. Alas eta erran duçunean

<119r>[1152] […]ñere enojaceric, eta fastiaceric baycic beti egonen dirade contentu eta placer andiarequi nola lembicico egunean beñere enoyatu eta fastiatu bague.

G. Cer gloria içanen du, çeruan dagonean, gorpuçac, alas eta denean gauza ciertoa eçe gorpuçac ecin icusi deçaquela Iaungoycoa baycic arima sollac?

R. Eguia da eçe arimac sollac icus[1153] deçaquela Iaungoycoa, baya onaren arimac icustetic Iaungoycoa erreçebituco du[1154] gorpuçac ere bere gloria, içanen bayta ayn andia, eçe çeruan dagonaren gorpuça içanen bayta ayn argui eta eder, eçe arguituco baytu iguzquiac bezala, ezta beñere illen, eztu beñere <119v> içanen goseric eta ez egarriric, ez minic, eta heritasunic baterere, baycic beti ossasuna. Eta, ala, egonen da beti gozo eta contentu gucis andiarequi berçe gauzaric batere deseatu bague.

G. Eta cembat iraunen diote oney çeruco gloriac?

R. Beti iraunen diote, beñere faltatu bague eta gutitu bague. Ala, egonen dira beti nay duten contentu eta gozo guciarequi, beñerere gaycic sentitu bague eta gueyago ondasunic deseatu bague, ceren içanen baytute desea al deçaqueten ondasun gucia.

G. Alas eta erran duçunean cer gloria içanen duten onec çeruan, erran draçadaçu[1155]

<122r> […]gun bear duguna.

---

[1152] 118. orria falta da. Aurreko orrialdeko apeuari esker dakigu *iaun-* batez hasten dela 118r.

[1153] icus] jat. *yqus*.

[1154] du] jat. ez dago.

[1155] Bi orri falta dira.

G. Cer escaçen dioçu erraten duçunean «Barca drazquiguçu gure zorrac»?

R. Escaçen diot Iaungoyco gure iaunac barca drazquigun gueuren becatuac eta ayengatic zor dugu pena.

G. Cerengatic erraten duçu «Guc gueuren zor duguney barcaçen dizquiotegun bezala»?

R. Cerengatic ezpaytitu barcaçen Iaungoycoac becatuac bere injuriatu eta agraviatu duenari barcacen eztizquionari.

G. Cer escaçen dioçu erraten duçunean «Ezcayçaçula utci tentacioan erortera»?

R. Nola baytaqui Iaungoyco gure iaunac garadela flacoac eta davilela demonia perseguiçen gaytuela gauas <122v> eta egunas, etsay gossea eta cruela bezala al daguien gayz gucia procuracen digula eguitera. Otoyz eguiten diogu Iaungoycoari ezteçala utci consenti deçagun gure etsayac nay duenean. Eta, alaver, otoyz eguiten diogu ezteçala utci tenta gayçan gure etsayac, baldin aren magestadeas badaqui ezcaradela alaco tentaciotic atraco vitoriarequi.

G. Cer escacen dioçu erraten duçunean «Aytcetic, libra gayçaçu gaycetic». Cer gayç da ori?

R. Escacen diot Iaungoycoari libra gayçan becatu gucietatic demonioarenganic eta iffernutic eta desgracietatic.

G. Cer erran nay du «Amen» <123r>[1156] trabaju emanen diotenic?

R. Bay, iauna. Arra concienciarena, çeyn beti alaco, eta euçequico bayçayote beren buruey, oroyçen diradela becatu eguin citustenes eta ayetatic libraçeco vici ciradenean mundu onetan içandu citusten aparejues Iaungoycoaren partes, viotcean uquiçen cituela eta confessorec eman cisquioten abisoes erraten ciotela aparta citecela becatuetatic eta ocasio gaystoetatic, eta eguin ceçatela penitencia eta nay içan balute ayn facilquiro libratu ciratela iffernuco tormentu eta trabajuetatic. Eta ya bere faltas icusiric eztela erremedioric baterere, onec atormentatuco ditu gucis auniz eçe berac <123v> içanen baytirade beretaco borrero cruelac.

G. Eta cembat iraonen[1157] dute iffernuco tormentu eta trabaju ohec?

R. Eztirade beñere acabatuco, baycic beti iraonen dute, ez iffernua acabatuco da, ez an dagonaren arima ez gorputça eztirade beñere nay luquetelaric illen, ceren heriotceac igues eguinen du ayenganic ango suac beti erre eta abrassa diçan beren becatuen castigotan.

G. Alas eta erran duçunean iffernuco suac erreco eta abrasatuco dituela, gaystoac nola eztitu su arc acabatuco?

R. Iaungoycoac, ceñen contra atrebitu baycirade becatuac eguitera, nay du ayen <124r> castigaceco iffernuco suac beñere acabatu bague beti erre eta abrasa diçan, ez solamente ariman, baycic gorputcean here. Alaco maneras eçe entrañaturic junto egonen bayta. Alaco maneras eçe ezpaitira beñere libratuco arenganic eta ez berce tormentuetatic.

---

1156 <123r>] Orrialdekatzea egokia bada ere, badirudi orrialde bat falta dela jarraian. <122v>n apeuak *ala* dio, baina <123r> *trabaju*-rekin hasten da; esaldiak ere zentzurik ez du.

1157 iraonen] hemen eta aurrerago aldaera hau dagoen arren, gainerakoan *iraun* da Beriainek erabiltzen den forma.

G. Cembayt aldis etçayzquiote iffernuan daudeney arinduco eta gutituco an diraden penac, trabajuac eta tormentuac?

R. Iffernuco pena eta trabajuac iraunen dute beti beñere arindu eta gutitu bague. Alaco maneras eçe milla urte passatu eta egonen baytirade bere indarrean nola lembicico egunean, eta passatu berroguey eta amar milla urte, <124v> alaver, eta millonac passatu eta beti bere artan batere gutitu bague.

G. Nola ezta iffernuan erremedioric batere?

R. Iffernuas[1158] guero ezta becaturic barcaçen,[1159] ezta lecuric penitencia eguiteco, ceren passatu bayçayote malaventuratu ahey denvora penitencia eguiteco, Iaungoycoac señalaturic daucana bayta vici garaden artean. Eta nola ezpaytira denbora cenean aprovechatu,[1160] an egonen dirade ezperançaric eta erremedioric bague, ceren Iaungoycoa ecin muta diteque. Eta, ala, aren sentencia gaystoey emanic dagonac irahun bear du beti.

G. Erran draçadaçu, aparta gaytecen onlaco gauzetatic, <125r> cergatic joaten dira iffernura?

R. Becatu mortalearengatic, ceren da gauza ciertoa eçe becatu mortale eguiten duena, nayz bat baycic espada here, ill badadi arças penitencia eguin bague, joanen dela iffernura.

G. Ayn gauza gaystoa da becatu mortalea?

R. Da gauza gucietatic gaistoena. Eta arracioa da claroa. Ceren becatu mortale eguiten duenean batec puntu artan berean galcen du Iaungoycoaren gracia eta adisquidetasuna, eta ala galcen du Iaungoycoa bera, bayta calte gucietatic andiena eta ceruco gloria erdesteco çuen drechoa artan dagon bitartean.

<125v> G. Baldin badaquiçu berce arracioric adicera emateco ceyn gauza gaystoa den becatu mortalea, erran çaçu.

R. Erranen dut berce arracio bat ceñec, alaver, adicera ematen baytu ceyn gauza gaystoa den becatu mortalea. Eta da eçe, içanica Iaungoyco gure iauna ain ona, ayn urricariosoa, misericordiosoa eta justoa, ceñen baytan ecin baytate gauza gaystoric eta arracioaren contra denic, eta, ala, eztitu castigacen gaystoac ayen becatuec meregi duten baño gueyago, bada, eracusten digu gure fede sanduac eçe becatu mortalean illcen diradenac penitencia eguin bague bere becatuengatic egosten dituela iffernura. Orlatan, <126r> castigo hura da castigo justoa eta meregi dutena, nondic atracen bayta becatu mortalea dela gauza gucietatic gaystoena.

G. Orlatan, gauza acertatua da aborreci deçagun becatua gueyago, eçes berce gauza guciac, eta eguin deçagun bereala penitencia?

R. Gauza gucis acertatua da gueuren salvacioco negocioan, ceñetan baytoagu ambat seguroan joatea eta, ala, eguitea bereala penitencia gueuren becatues, ayetatic apartacen garadela, ceren eztaquigu noyz eta nola illen garaden, aguian desmayo bates edo cembait desgracias aurquenduco gaytusten illic. <126v>

---

1158 iffernuas] jat. *iffernuras*.
1159 barcaçen] jat. *barçacen*.
1160 aprovechatu] jat. *aprovechatuc*.

M. Placer dut erran baytuçu ongui nic encomendacen drauçudana, da gauza ohec considera diçaçun mayz eta sosegurequi, eçe eguin badeçaçu conveni den bezala, auniz aprovechatuco çayçu becatuac aborreciceco eta, bereala, penitencia ongui eguiteco ayetatic libraceco. Eta, ala, escapatuco çarade iffernuco pena eta trabajuetatic, eta erdetsico duçu ambat ondasun nola bayta glorian.

G. Cer erran nay du dela vicice seculacoa?

R. Erran nay du eçe bienaventuratuac ceruan içanen dutela vicice bat gorputcean eta ariman ayn ona eta contentu anditacoa, eçe içanen baytute nay duten gucia, <127r> deuserere faltatu bague. Eta vicice hau içanen da beti iraunen duena beñerere acabatu bague.

G. Credoan eta articulo fedescoetan dauden gauzes landara sinestacen duçu berce gauzaric?

R. Bay sinestacen dut Eliza ama sanduac sinestatcen dituen gauza guciac.

## Bigarren capituloa
## Dotrinaren bigarren partea, ceñetan declaracen bayta Ayta gurea eta berce Elizaco oracioac

M. Icusi dut ya nola daquiçun çer bear duçun sinestatu, bayta lembicico gauza. <127v> Gatocen oray bigarrenera, bayta ser escatu bear den.

G. Erran eçaçu Ayta gurea?

R. «Ayta gurea ceruetan çaudena», erran den bezala.

G. Norc erran çue Ayta gurea?

R. Christo gure iaunac.

G. Cerengatic?

R. Guri eracusteagatic nola oracio eguin bear dugun.

G. Cer da oracio eguitea?

R. Viotça alchatçea Iaungoycoarengana escacen diogula eguin drazagun merchede auniz.

G. Ayta gurea erraten duçunean, norequi minçaçen çarade?

R. Iaungoyco gure iaunarequi.

G. Non dago Iaungoyco gure iauna?

<128r> R. Lecu gucietan presente dago bere essencias, presencias eta potencias.

G. Ceyn da oracio gucietatic oberena?

R. Ayta gurea.

G. Cerengatic?

R. Ceren Christo gure iaunac, apostoloec escaturic, erran içandu bayçuen.

G. Eta cergatic gueyago?

R. Ceren oracio onetan baytaude gauza Iaungoycoari escatu bear çayzquion[1161] guciac, ceren Christo gure iaunac ordenatu bayçuen, ceñec baytaqui iorc here baño obequiago çer escatu bear dugun. Eta, ala, da provechosoena eta poderosoena Iaungoycoarenganic erdesteco conveni çaygun gucia.

1161 çayzquion] jat. *çayzquio*.

G. Cerengatic nay du dey draçogun Iaungoycoari «Ayta»?

<128v> R. Ceren aren semeac bezala ar deçagun confiança eta animo otoyz eguiteco digun bear dugun gucia.

G. Nola da Iaungoycoa gure ayta?

R. Cerengatic criatu baycaytu. Eta, ala, arenganic baytugu gueuren naturaleza eta gauza guciac, eta gueuren partetic aren favorearequi eguiten dugula arc nay duena, emanen draugu bere gracia.

G. Eta cergatic erraten duçu «Ayta gurea» eta ez «Ene Ayta»?

R. Ceren daguigun gucioc garadela ayta baten semeac, eta, ala, anayac oneritsi decegun, batac bercea, ayta baten semeac garaden bezala.

<129r> G. Cergatic gueyago?

R. Ceren guciec esca deçagun[1162] guciendaco, ceren gucien oracioa da obeago batena baño, ceren guciec erraten dutenean[1163] Ayta gurea, otoyz eguiten dute guciengatic, eta, ala, edoceñengatic.

G. Nola diozu «Ceruetan çaudena», erran duçu baldimba Iaungoycoa dagola lecu gucietan?

R. Eguia da Iaungoycoa dagola lecu gucietan, baya guciarequin ere nay du Iesu Christoc oracio onetan erran deçagun «Çeruetan çaudena», ceren ceruetan icusicen dute ayngueruec eta bienaventuratu guciec.

G. Cergatic gueyago?

R. Cerengatic erraten dugunean <129v> «Ceruetan çaudena», considera deçagun han çeruan dagola gure herencia,[1164] eta emen vici garadenean lurrean, garadela peregrinoac videan gavilçanac, eta hau dela gauza fite acabatuco çayguna. Eta, ala, cerucoa bayta beñere acabatuco[1165] eztena, hura[1166] procura deçagun lembicicoric, gauza ambat conveni çayguna bezala.

G. Cer escacen dioçu erraten duçunean «Santifica vedi çure içena»?[1167]

R. Iaungoycoa nola bayta gure iauna, escacen diot guciec mundu gucian eçagun deçaten nola den Iaungoyco eguiascoa eta eztela berceric, eta ala guciec adora deçaten, alabatu eta <130r> serviçatu.

G. Cer escacen duçu erraten duçunean «Etorri bedi çure erreñua»?

R. Escacen diot dagon emen lurrean vici garadenean gurequi bere gracias, eta guero digun bere gloria.

G. Cer escacen dioçu erraten duçunean «Eguin bedi çure vorondatea ceruan bezala lurrean ere»?

R. Nola escatu baytiot Iaungoycoari digun emen bere gracia eta guero gloria, escacen diot eguin dedin aren vorondatea, ceren erdesteco emen aren gracia eta guero gloria bear dugu eguin aren vorondatea beguiracen ditugula aren mandamentuac.

---

1162 deçagun] jat. *daçagun*.

1163 dutenean] jat. *dutunean*.

1164 herencia] jat. *herencioa*.

1165 acabatuco] jat. *acabutuco*.

1166 hura] jatorrizkoan *hiura* ala *hlra* jartzen duela dirudi, baina ez da erraz interpretatzen. Beharbada *hura*-ren ordezko hutsa da. Gaztelaniazko bertsioan «aquella» jartzen du.

1167 yçena] jat. *yçenari*; ziurrenik *dioçu*-k behar duen datiboaren eraginez.

<130v> G. Cer erran nay duçu erraten duçunean «Ceruan bezala lurrean ere»?

R. Erran nay dut eçe ala, nola ayngueruec eta bienaventuratuec çeruan eguiten baytute Iaungoycoaren vorondatea cumplituquiro deusetan faltatu bague eta principalquiro aren divina magestadeari ongui irudiceagatic eta hau beti ala daguigun guc ere emen lurrean.

G. Cer escacen dioçu erraten duçunean «Gure egunorosco oguia eman draçaguçu egun»?

R. Principalquiro escacen diot arimaren eguia, bayta aldareco sacramentua, ceñec mantenacen baytu arima eta Iaungoycoaren itçac [...][1168]

<133r> R. Ala dela, biz ala. Ala deseaçen dut eta, ala, otoyz eguiten dut eguin dedin escatu nayçen beçala.

G. Badaquiçu berce oracioric?

R. Bay, iauna.

G. «Iaungoycoac salva çayçala Maria» eta «Iaungoycoac salva çayçala erreguia eta ama misericordiosoa».

G. Erran eçaçu «Iaungoycoac salva çayçala Maria»?

R. «Iaungoycoac salva çayçala Maria, gracias betea», erran den bezala.

G. Erran eçaçu «Iaungoycoac salva çayçala erreguia»?

R. «Iaungoycoac salva çayçala erreguia eta ama misericordioscoa», erran den bezala.

<133v> G. Oracio ohec erraten dituçunean, norequi minçaçen çara?[1169]

R. Andre dona virgina Mariarequi.

G. Cerendaco erraten dizquioçu oracio ohec?

R. Escaçeagatic andre dona Mariari otoyz eguin deçan vitartecoçale jarriçen dela guregatic Iaungoycoaren aurrean. Eta, ala, erdetsi deçagun aren divina magestadearenganic conveni çayguna.

G. Nor da andre dona virgina Maria?

R. Da Iaungoycoaren ama.

G. Non dago andre ayn sandu eta andi ori?

R. Ceruan dago gorpuçarequi eta arimarequi Iaungoycoas gozacen duela.

<134r> G. Eta elizan dagona, nor da?

R. Aren figura eta imagina.

G. Cerendaco dago han?

R. Aren imagina hura icusi eta oroyt gaytecen ceruan dagonas.

G. Eta aren imaginaren aurrean erraten duçunean «Iaungoycoac salva çayçala Maria» edo «Iaungoycoac salva çayçala erreguia eta ama misericordiascoa», norequi minçaçen çara, ceruan dagonarequi ala aren imaginarequi?

R. Icusten dudanean andre dona Mariaren imagina eta figura oroytcen nayz ceruan dagonas Iaungoycoas gozacen. Eta arequi minçacen nayz, erraten diodala <134v> «Iaungoycoac salva çayçala Maria, gracias betea» edo «Erreguia eta ama misericordioscoa». Eta ez aren imaginari, bayta arris edo çures

1168 Jarraian datozen bi orri falta dira: <131> eta <132>.

1169 çara] jat. *cara*.

edo verce gauzas eguina. Eta, ala, eztu adicen eta ezta minçacen eta ecin erdeci draçaquegu escacen dioguna, baycic ceruan dagonac.

G. Nola, bada, erraten da Christo gure iaunaren imaginac edo aren amarenac edo alaco sanduarenac eguin duela milagroa?

R. Imaginec eztute eguiten milagroric, baycic Iaungoyco gure iaunac, baya aunicetan eguiten ditu milagroac sanduen otoycengatic eta gustien gañean andre dona Mariaren oracioengatic. <135r> Eta, ala, erraten denean «Onlaco virginaren imaginac edo berce sanduenac eguin du milagroa» erran nay du eçe Iaungoycoac andre dona Mariaren otoytces eguiten duela milagroa, ala berce sanduen otoytces.

G. Cer erreverencia eguin bear diotegu sanduen imaginey?

R. Erreverencia hura vera sanduey, ceñen imaginac baytirade eguiten dioteguna.

G. Eta sanduen erlequiey, çer erreverencia eguin bear diotegu?

R. Sanduey berey eguiten dioteguna, ceren ayen arimac, Iaungoycoas goçatçen daudenac,[1170] mundu onetan vici <135v> içandu baycirade aren serviçuan.

G. Cerengatic Ayta gurea erran eta bereala erraten da «Iaungoycoac salva çayçala Maria» berce oracioac baño leen?

R. Cerengatic ezpaytugu Christo gure iaunaren aurrean[1171] vitartecoçale obeagoric eta ambat diroquenic nola Virgina Maria, aren ama. Argatic, erranes guero iaun onec eracutsi digun oracioa, bayta Ayta gurea, acudicen dugu aren ama gucis sanduagana bere otoytces lagun daquigun erdestera escatu dioguna. Nola emen, munduan, emanes guero erregueri memoria bat, artan adicera ematen diogula çer deseacen dugun, procuratçen <136r> dugu encomendacera negocio hura arequi guero gueyen diroquenari, ceren negocia draçagun nay duguna. Argatic, bada, Ayta gurea erran eta bereala erraten dugu «Iaungoycoac salva çayçala Maria».

G. Cergatic gueyago?

R. Cerengatic oracio Ayta gureas landara, oberena da «Iaungoycoac salva çayçala Maria». Cerengatic Iaungoycoaren manus eta ordenes baytago ordenaturic arcangel Gabrielec eta Santa Isabelec, eta Elizac erranicaco itçes. Cerengatic itç ayec, «Iaungoycoac salva çayçala gracias betea. Iauna da çurequi. Bedeycatua çara emasten artean», erran cituen <136v> San Gabrielec Iaungoycoaren partes, aren mandatariac bezala. Berce itçac, «Bedeycatua da çure sabeleco frutua», erran cituen Santa Isabelec, cegolaric Espiritu Sanduas beteric. Berce itç guciac eçarçen ditu Eliza ama sanduac, Espiritu Sanduac berac eracutsiric. Eta, ala, erraten da eçe oracio hau Ayta gureas landara dela oberena.

M. Ongui dioçu. Oray erran draçadaçu oracio hau gucia, itcic batere utci bague, ceren arracio da guciec adi deçaten oracio ayn on hau.

G. Cer erran nay du «Iaungoycoac salva çayçala, Maria»?

[1170] daudenac] jat. *daudonac*.
[1171] aurrean] jat. *aurren*.

R. Da salutacea andre dona <137r> Maria, eracusten dugula onetan garadela aren adisquideac eta, ala, gatocela arequi minçacera; onetaco erraten dizquiogula ayngueru San Gabrielec erran cizquion itçac, ceñes baytaquigu alegracen dela auniz eta plaçer arcen duela ençuteas berri ain onac, eta gu oroytcen garadenas Iaungoycoari graciac emateas ari eguin cion ondasun ayn andias.

G. Cer erran nay du «Gracias betea»?

R. Erran nay du Virgina Mariac duela gracia gueyago berce sandu guciec baño, ceren eguin baytitu obra gueyago eta obequiago Iaungoycoari irudicen çayquionac, eçes berce gucienac; <137v> eta, ala, du gracia gueyago.[1172]

G. Cer erran nay du «Iauna da çurequi»?

R. Erran nay du eçe Iaungoycoa gure iauna egondu dela virgina andre dona Mariarequi, beti governaçen duela adisquidearequi bezala, concebitu içandu cen bezala, libracen çuela becatu gucietatic. Ala eçe ezpayta içandu Virgina Mariaren baytan, ez becatu originaleric, ez mortaleric, ez benialeric baterere. Eta, ala, da sandu guciac baño obeago.

G. Cer erran nay du «Bedeycatua çara emazte gucien artean»?

R. Dela bedeycatua emazte gucien artean, ceren <138r> bayta ama eta virgina, eta Iesu Christoren ama, çeñenganic[1173] baytatorgu guciey bedeicioa.

G. Cer erran nay du «Eta bedeycatua da çure sabeleco frutua, Iesus»?

R. Erran nay du Iesus andre dona Mariaren semea dela guiçona; eta bedeycatua guiçon gucien artean. Bay eta dela Iaungoycoa, eta argatic dela bedeycatua creatura gucien artean, ala lurrean nola çeruan. Eta argatic erraten diogu «Bedeycatua da çure sabeleco frutua, Iesus».

G. Orlatan, placer arçen du auniz virgina Mariac oracio hau errateas?

<138v> R. Ala da, cerengatic frutu ona içatea da arbolearen[1174] alabança eta semearen gloria amarena. Eta Iesus içatetic aren semea, datozquio ambat eta ayn ondasun andiac. Dituela ordu onarequi.

G. Cer escacen dioçu andre dona Maria beti virginari erraten duçunean «Santa Maria Iaungoycoaren ama, otoyz eguiçu gure becatariengatic oray eta gure heriotceco orduan»?

R. Itz ohec eçarri ditu oracio onetan Eliza sanduac jaquinica dela gucietatic gueyen diroquena Iaungoycoarequi guri erdesteco arenganic conveni çayguna. Eta, ala, erraten diot otoyz eguin deçan vitartecoçale <139r> guertacen dela gu becatariengatic gure necessidade gucietan oray, vici garadenean, ditugunetan eta heriotceco orduan, noyz baytugu necessidade gueyago aren faborearendaco.

G. Alaver, eguin bear diotegu oracio aynguerueу eta sanduey?

R. Bay, iauna; gure vitartecoçaley bezala.

G. Cer gauza dirade ayngueruac?

R. Dirade espiritu sollac, gorputcic eta materiaric batere bague, eta baytaude Iaungoycoa alabacen dutela.

---

[1172] gueyago] jat. *geyago*.

[1173] çeñenganic] jat. *çenenganic*.

[1174] arbolearen] jat. *orbolearen*.

G. Cer eguiten dute gueyago?

R. Guiçonac beguiracen dituzte eta ayen mandatuac <139v> eta oracioac eramocen dituzte Iaungoycoarengana.

G. Cer oracio erraten dioteçu aynguerуey eta sanduey?

R. Ceymbayt aldis Ayta gurea eta «Iaungoycoac salva çayçala Maria».

G. Nola bada Ayta gurea erraten duçunean, etçara minçacen Iaungoycoarequi eta «Iaungoycoac salva çayçala» erraten duçunean andre dona Mariarequi?

R. Bay, jauna, eguia da; baya nola oracio hau, Ayta gurea, bayta gucietatic oberena, ceren erran içandu bayçue Iesu Christo gure iaunac, ceñetan baytaude guc bear ditugun eta conveni çayzquigun gauza guciac eta nola ohen erdesteco, auniz balio baytu ayngueruen eta <140r> sanduen otoyçac eta gueyena Virgina Mariarenac, argatic erraten dut Ayta gurea eta «Iaungoycoac salva çayçala Maria» ayngueruac edo sanduac Virgina Mariarequi batean vitartecoçale guerta daquizquigun erdesteco deseaçen eta bear ditugun gauzac.

## Irurgarren capituloa

## Dotrinaren irurgarren partea, ceñetan tratacen bayta Iaungoycoaren legue sanduaren mandamentuen eta Elizacoen gañean

G. Erran içaçu Iaungoycoaren legue sanduaren mandamentuac? <140v>

R. Iaungoycoaren legue sanduaren mandamentuac dirade amar, erran den[1175] bezala.

G. Certan obligacen gaytu lembicico mandamentuac?

R. Obligacen gaytu daucagun Iaungoycoa, gure iauna, Iaungoyco eguiascoa dela, eta ez ior ere berceric.

G. Norc dauca Iaungoycoa, gure iauna, dela Iaungoycoa eguiascoa?

R. Norc adoracen baytu hura bera Iaungoyco eguiascoa den bezala, fedeas, esperanças eta caritateas.

G. Nola bear da Iaungoycoa adoratu?

R. Erreverenciarequi gorputças eta arimas.

G. Norc eguiten du becatu mandamentu onen contra?

R. Gentilec eta ayec guciec <141r> ceñec baytauzquite bere Iaungoycoçat[1176] iguzquia edo ilarguia edo berce creaturac, eta ala adoracen dituztenac.

G. Norc honracen du Iaungoycoa fedeas?

R. Daucanac Iaungoycoa dela eguia eracusten[1177] duena eta, ala, sinestatce duenac Elizari eracutsiric dauzquien fedesco gauza guciac diradela eguiac, ceren Iaungoycoa ecin engaña diteque eta ecin ior ere engaña deçaque.

G. Norc eguiten du becatu fedearen contra?

R. Sinestatcen eztituztenec Eliza ama sanduac eracusten dituen fedesco gauzac, eta Iaungoyco falsoetan sinestatcen dutenec edo diradela auniz Iaungoyco.

<141v> G. Norc honraçen du Iaungoycoa esperanças?

---

[1175] erran den] jat. *errôdô*.

[1176] Iaungoycoçat] jat. *Iaungoyçat*.

[1177] eracusten] eskuizkribuan ez da <n>-rik, ezta <*ô*>-rik ere, <è> baizik.

R. Daucanac bere baytan confiança, dela gucis fiela eta, ala, cumplituco dituela prometaturic dauzquigun gauza guciac, ceren bayta poderoso nay duen guciaren eguiteco.

G. Orlatan, barcatuco dizquio becatariari bere becatuac, munduan den andiena içanagatic, çeren ala dauca Iaungoycoac prometaturic?

R. Ala da eguia; baldin eguin badez penitencia bear dena, duela dolore eta damu bere becatu eguines, eta daucala propositu sines becatuetatic apartaçeco eta emendaçeco. Çeren onlacoey diaducote Iaungoycoac prometaturic barcatuco dizquiotela. <142r>[1178]

G. Norc eguiten du becatu esperançaren contra?

R. Desconfiaçen dutenec Iaungoycoaren misericordias eta gayzqui confiaçen duenac.

G. Nor da gayzqui confiaçen duena Iaungoycoaren misericordias?

R. Huste duenac eçe becatuetatic apartatu bague, aytçetic, daucala proposito eta intencio becatu mortale eguiteco, barcatuco dizquiola eta salvatuco dela.

G. Norc honraçen du Iaungoycoa caritateas?

R. Iaungoycoa oneristen duenac gauza gucien gañean.[1179]

G. Nor da oneristen duena Iaungoycoa gauza gucien gañean?

R. Iaungoycoaren mandamentuac <142v> beguiracen dituenac eta iolaco maneras autsicen eztituenac.

G. Orlatan, Iaungoycoaren mandamentuac autsicen dituenac, becatu mortale eguiten duela, eztu Iaungoycoa oneristen?

R. Ala da eguia, erranagatic itces oneristen duela, ceren Iaungoycoaren oneristea eztago itcetan solamente, baycic obra onac eguitean, ceren itçac aufer dirade obra contra diradenean.

G. Norc eguiten du becatu caritatearen contra?

R. Eguiten eztuenac Iaungoycoac bere mandamentuetan manacen duena eta esquer gabe dena eguiten dizquion ondasunes eta merchedes.

<143r> **Bigarren mandamentuaren gañean**

G. Norc eguiten du juramentu vanoro?

R. Iuramentu eguiten duenac daquiela eztiola eguia edo gauza gaystoaren gañean eta bear bague.

G. Eguiten duenac juramentu daquiela eztiola eguia, cer becatu eguiten du?

R. Eguiten du becatu mortale, baldin daquiela gueçurra diola juramentu eguiten badu.

G. Iuramentu eguiten duenac eztaquiela dion egui edo gueçurra, ala dudan dagola, eguiten du becatu mortale?

R. Bay, jauna. Ceren jarriçen <143v> bayta peligroan gueçurraren gañean[1180] juramentu eguitera.

---

1178 <142r>] jat. <129>; baina, bistan denez, hutsa da hau ere.
1179 gañean] jat. *ganean*.
1180 gañean] jat. *ganean*.

G. Juramentu eguiten duenac eguinen duela gauza gaysto bat, çer becatu eguiten du?

R. Eguiten duenac juramentu eguinen duela becatu mortale den gauza bat, nola çembayt[1181] persona ilceco edo berçe gauza gaisto andi den bat, eguiten du becatu mortale, baya eguin badez juramentu eguinen duela cembayt gayzqui chiqui, nola bayta erranen duela gueçur bat iori calteric eztatorcola edo ebasteco laureco bat eta berce onlaco gauza guti bat, solamente eguiten du becatu beniale.

G. Noyz erraten da eguiten dela <144r> juramentu necessidaderequi?

R. Noyz gauzac baytirade importancia anditacoac eta conveni bayta ayen aberigoaceco jaquin ceyn den eguia, orduan eguiten da juramentu necessidadearequi, eta ezta becatu; aytçetic, Iaungoycoa serviçaçen du eguiaren gañean daquiela eguiten duela eta, orduan ere, eguin bear du respeturequi eta erreverenciarequi.

G. Orlatan, eguiten dute becatu edoceyn gauzaren gañean burlaçen edo jocaçen diradenean eguiten dutenec?

R. Bay, iauna. Ceren gauza guti importaçen diradenetan eta necessidade bague, ecarçen baytute aytor Iaungoycoa, bayta faltaçea aren <144v> magestadeari zor diogun respetu eta erreverenciarequi.

G. Iuramentu eguiten duenac manera onetan necessidade bague, çer becatu eguiten du?

R. Eguiaren gañean eguiten duela eta ez gauza gaystoaren gañean, eguiten du becatu veniale, çeren respeto eta erreverencia gutirequi eguiten baytu juramentu.

G. Alaver, da becatu juramentu eguitea Iaungoycoaren criaturac aypaçen dituenean juramentu eguiteco intenciorequi oray erraten dugun manera onetan?

R. Bay, iauna; ayetan dacargunean aytor ayen criaçalea.

G. Bada, nola erranen dugu ez becaturic eguiteco?

R. Erran gueuren platiquetan eta conversacioetan <145r> ala da edo ezta[1182] nola Iesu Christo gure iaunac eracusten baytigu.

G. Voto eguiten duenac eguiteco gauza on den bat, obligatu da cumplicera?

R. Bay, jauna, al daguien fitetcena.

G. Noyz da becatu ez cumplicea voto eguiten dena eta auniz demboras luçacea?

R. Ocasioric eztuela cumplicen eztuenean letratu artan adicen çayotenen irudira.

**Irurgarren mandamentuaren gañean**

G. Norc jayac beguiracen ditu?

R. Meza ossoric ençuten duenac eta ocasio eta bear bague <145v> trabajacen eztenac.

G. Eta içanen da becatu dembora guti bates edo bear diradenetan lan eguitea?

---

[1181] cembayt] jat. *cembay*.

[1182] ezta] jat. *ozta*.

R. Ez. Jauna. Baya dudan diraden ala ez galdeguin bear du daquienari eta ala dudatic atra. Baya dembora gutia denean trabajacen dena, necessidade bague içanagatic, solamente da becatu veniale.

**Laurgarren mandamentuaren gañean**

G. Norc erraten da eguiarequi honracen dituela ayta eta ama?

R. Obedicen diotenac eta respeto ecarcen diotenac eta socorracen bere necessidadetan.

<146r> G. Nor, ohessas landara, adicen da mandamentu onetan diradela aytac?

R. Çarrago diradenac adinetan eta dignidade eta governaceco cargu duten personac.

**Borzgarren mandamentuaren gañean**

G. Cer debecacen du Iaungoycoac mandamentu onetan?

R. Ez illcea ior ere autoridade edo drechoric artaco eztuela.

G. Cer gueyago debecacen du?

R. Gayzqui eguitea proximoari obras edo itces edo deseos.

G. Norc eguiten du mandamentu onen contra?

<146v> R. Illçen duenac çembayt persona edo çauriçen duenac edo aporreaçen edo meachaçen duenac edo pesadumbre ematen dionac bere itçes edo obras atsecabe emateagatic. Bay eta çeñec bere personas deseaçen baytu dañu ohetatic eguitera edo berçec eguin draçoten arenganic mendecaçeagatic.

G. Bada onesas landara berçe manerasco illçeric?

R. Bay, iauna. Socorraçen eta faboraçen eztuenac al daguiela necesidade andian dagona.

<147r> **Seygarren mandamentuaren gañean**

G. Norc beguiraçen du mandamentu hau?

R. Casto eta honesto denac bere itçetan obretan eta pensamentuetan.

G. Eguiten du becatu pensamentu gaystoac etorçen çazquionac procuraçen duenean egostera bereganic oarçen çayonean?

R. Ez, iauna. Aytçetic, meregiçen du, baldin onequi batean guençen baytu bereganic ocasio gaystoac.

G. Bada, norc eguiten du becatu pensamentu gaystoetan.

R. Norc determinaçen baytu pensamentu gaystoac <147v> obras cumpliçera edo bere nayes eta vorondates goarcen dela ayetan placer arcen duenac.

G. Cer gauza laguncen dirade casto içateco?

R. Oracio eguitea eta mayz confessaçea eta comecaçea eta gauza onetan ocupaturic egotea eta ocasio honen contra diradenetatic apartacea.

**Çazpigarren mandamentuaren gañean**

G. Norc cumplicen du mandamentu hau?

R. Arçen eztuenac berceren dena eta ezpaytu nay bere javeraren vorondateraren contra.

<148r> G. Norc autsicen du mandamentu hau?

R. Calte eguiten duenac berçeari bere haziendan edo eraguiten duenac.

G. Eta ebasten duenac berceari bere hazienda edo calte eguiten duenac, asco da confessaçea bere becatua?

R. Ez, jauna. Baicic confessaceas landara, bear du errestitucio eguin. Erran nay dut, itçuli bear du ebatsi duen gauza edo calte eguin duena jabeari.

G. Eta baldin batec ecin itçuli badeçaque ebatsi duen gucia edo calte eguin duena, obligatu da itçulçera al daguiena?

R. Bay, jauna. Baldin batec ebatsi bades dozena bat erreal edo ambat balio duen <148v> gauza bat eta ezpadu guciaren içulceco eta bay erdiarendaco edo irurgarrena, hura bear du itçuli eta gañeracoa duenean.

G. Obligatu da persona bat bereala itçulcera artu duena edo calte eguin duena?

R. Obligatu da ez auniz demboras luçacera ocasioric ezpadu.

G. Eta eztuenac çerças eta, ala, ecin diroquenac, çer eguinen du?

R. Procuratu bear du bere partetic eguitera al daguiena itçulceas. Eta oray ezpadu, duenean. Ceren eztu nay Iaungoycoac bercea gueldi dedin calte eguin çayonarequi.

<149r> **Zorcigarren mandamentuaren gañean**

G. Norc cumplicen du mandamentu onequi?

R. Iuzgacen eztituenac bercearen gayçac señale artaco asco denic bague eta eztuenac erraten bercearen[1183] gayzquiric.

G. Norc mandamentu hau autsicen du?

R. Arracioaren eta justiciaren contra, edequicen dionac bere proximo lagunari fama edo aguercen baytu secretuan dagon becatua edo gueçurra erraten duenean eguin duela berceac cembayt becatu.

G. Erran diteque becaturic baterere bague gueçurric <149v> cembayt intencio ones, nola bayta erran gueçur bat echean acarric ezten edo cembayt calte eztatorcon berari edo proximoari?

R. Beñere ecin erran diteque gueçurric becatu bague, baya dissimula deçaque eguia igilic dagola, erran bague çer passatu den.

G. Ceyn becatu andia da gueçurra erratea?

R. Irur maneras erran diteque gueçurra. Lembicicoric, calte eguiten diola bere proximoari, nola batec juezac manaçen duenean erran deçan daquien eguia juramentuaren azpian eta guciarequin ere gueçurra erraten du. Onlacoac beti eguiten[1184] du becatu mortale.

<150r> G. Nola gueyago?

R. Bigarrena da juramentu artuagatic juezaren escuan, baya erayquiçen dio proximo lagunari falso testimonio erraten duela evatsi duela gauza andi bat edo gayzqui andi bat eguiten duela eta ez ala içan. Alaver, manera one-

1183 bercearen] jat. *berceaten.* Testuinguruagatik, ez dirudi 'berce baten'-etik eratorria denik, gainera kasu bakarra baikenuke Beriainengan. Hori dela eta, hutsa izateko itxura du; inprentan aski ohikoa zen <r> eta <t> nahastea.

1184 eguiten] jat. *eguten.*

tan gueçur erratea da becatu mortale, çeren bayta erayquicea falso testimonio gauza andian. Eta hau debecaçen da mandamentu onetan.

G. Nola gueyago?

R. Irurgarren gueçur erratea da batec erraten duenean gueçurra libraçeagatic cembayt persona cembayt caltetic edo peligrotic, edo iori calteric etorri bague eta ez provechuric manera <150v> onetan bietan, gueçur erratea da becatu beniale juramenturic eguiten ezpadu, ceren juramentu eguiten den oros gueçurraren gañean da becatu mortale.

**Bedratci eta amargarren mandamentuaren gañean**

G. Cer devecaçen çaygu bedratcigarren mandamentuan?

R. Lagunaren emastearequi becatu eguitera deseacea.

G. Cerengatic devecaçen çayzquigu deseo ohec?

R. Ceren baytirade peligrosoac eta cerengatic eguiten bayta vorondateas here becatu mortale deseacen duela.

<151r> G. Cer debecacen çaygu amargarren mandamentuan?

R. Deseo gaystoac haziendarenac.

G. Cerengatic?

R. Ceren baytirade cimendua lagunaren hazienda ebasteco.

G. Da becatu deseacea içatea bercea becambat, edo gueyago al balu, iori agravioric eguin bague?

R. Ez, jauna. Ceren emen debecacen çayguna da deseacea justiciaren eta arracioaren contra diradenac, nola bayta ebatsis edo berceari agravio eguines.

**Elizaco mandamentuen gañea**n

G. Erran içaçu elizaco mandamentuac?

<151v> R. Elizaco mandamentuac dirade borz, erran den bezala.

**Lembicico mandamentuaren gañean**

G. Norc cumplicen du meza ençuteco mandamentuarequi?

R. Meza ossoric ençuten duenac devociorequi, utci bague guarçen dela bere nayes pensamentuac mundu onetaco berce gauzetan egotera.

G. Eta nor da obligatu eztena meza ençutera?

R. Eriac eta nor baytago cembayt necessidades eta causas eguiasco denas ocupaturic.

<152r> **Bigarren eta irurgarren mandamentuen gañean**

G. Cerengatic erraten duçu confessatu eta comecatu gutienean urtean beyn?

R. Cerengatic ezpaycaytu Elizac gueyago aldis obligacen.

G. Eta consejus cembat aldis bear dugu confessatu eta comecatu?

R. Confessore onac eta discretoac aconsejacen duen aldietan.

**Laurgarren mandamentuaren gañean**

G. Baruceco mandamentuac certara obligacen gaytu?

<152v> R. Ez jatera vianda devecatuetatic eta ez egunean beyn baycic.

G. Cer hordus bear da jan?

R. Eguerdis guero, edo guti bat leencheago.
G. Devecaçen çaygu barur egunean edatea?
R. Ez eguerdi baño leen eta ez gueros ere.
G. Cer persona daude escusaturic baruetatic?
R. Oguey eta urte bat cumplituric eztuenac.
G. Nor gueyago?
R. Ecin barur ditezquenac adinaren edo heritasunaren causas edo trabajatu bearres, edo berçe causa eguiasco denes.
G. Cer eguin bear du consejus obligacioric eztuenac adinic ez içanes?
<153r> R. Cembayt aldis barutu, çeren husa ezpadidi barurçera cembayt egunes eguinen çayo neque barurarequi cumpliçea adinetara el dedinean.

**Borzgarren mandamentuaren gañean**

G. Cer frutus eguin bear ditugu amarrenac eta cembat?
R. Costumbres errecebituric dagonaren conforme.

**Laurgarren capituloa sacramentuen gañean**

G.Erran içaçu sacramentuac.[1185]
R. Sacramentuac dirade çazpi, erran den bezala. <153v>
G. Norc ordenatu citue sacramentuac?
R. Christo gure iaunac.
G. Certaco?
R. Sacramentuac ongui erreçebitu eta eman daquigun aren gracia.

**Batajaçearen gañean**

G. Cer da batayacea?
R. Da jayoçe espiritual bat çeñetan ematen bayçaygu gracia eta Christo gure iaunaren señalea eta aren çerviçaçeco bear dugun favorea.
G. Cer becatu guençen du batayaçeac?
R. Becatu originalea eta edocein berçeric aurquen badedi batayçen denaren baytan.

<154r> **Confirmacioaren gañean**

G. Cer gauza da confirmaçea?
R. Da sacramentu bat çeñeças ematen bayçaygu gueyago gracia, batayatu guinanean erreçebitu guinduenas landara, eta favore batayatu guinanean erreçebitu guinduen fede sandua confesaçeco demonioen eta fede hau perseguiçen dutenen contra esporçaçeco eta vitoriarequi atraceco.

**Penitenciaren gañean**

G. Cer da penitencia?
R. Da sacramentu bat Christo gure iaunac ordenaturic baytauca becatariey batayatus guero eguin dituzten becatuac barcaçeco.

[1185] sacramentuac] jat. galdera ikurra dator aginduaren ondoren.

<154v> G. Cembat gauza eguin bear du becatariac bere partetic ongui confessaceco eta, ala, sacramentu onen virtutes bere becatuen barcacioa erdesteco?

R. Becatariac ongui confessaceco eguin bear ditu laur gauza.

G. Ceyn da lembicicoa?

R. Lembicicoric, confessatu baño leen eguin bear duena da cuydadorequi oroytu eguin dituen becatues, mandamentuetatic examinacen duela bere conciencia.

G. Ceyn da bigarrena?

R. Bigarrena bear duena da içan damu eta urriquimentu bere becatu eguines, çeren ayeças eguin baytio agravio bere criatu çuen iaunari eta Iaungoycoari, edo <155r> çeren eguin duen becatu mortales galdu baytu bere partetic den becambates çeruco gloria edo iffernuco trabaju eta tormentuetatic libraceagatic.

G. Ceyn da irurgarrena?

R. Irurgarren gauza eguin bear duena da confessatu bere becatuac, guciac erraten dizquiola confessoreari becatu mortaleric batere utci bague.

G. Ceyn da laurgarrena?

R. Laurgarren gauza eguin bear duena da cumplitu confessoreac ematen dion penitencia, eguiten dituela arc erraten dizquion gauzac intenciorequi pagaceco bere becatuengatic çor duena.

G. Orlatan, confessoreac[1186] ematen dion penitencia da <155v> ongui al daguien fitetcena cumplicea, alas eta ayhessas pagacen duenean aren becatuec çor duten pena?

R. Ala da eguia. Eta da provechu anditaco gauza gracian dagola cumplicea.

G. Baldin bat confessa badedi bere conciencia examinaturic ongui eta, ala, bere becatues oroyturic eta erraten dizquiola guciac confessoreari, baya propositoric eta intencioric bague becatuetatic apartaceco eta emendaceco, alacoari barcatuco dizquio Iaungoycoac becatuac?

R. Eztizquio iolaco maneras barcatuco. Ceren onla confessacen denac eztu damu bere becatues bear duena, ceren da gauza ciertoa <156r> ecin iorc here duquela urriquimentu eta damu becatu eguines bear dena becatuac barcaceco, baldin ezpadu propositoric eta intencioric emendaceco.

G. Cer ondasun erdesten du ongui confessacen denac?

R. Iaungoycoaren gracia, ceñes barcacen bayçazquio becatu eguin dituen guciac, andiac içanagatic eta aurrera etorceco daudenetatic apartaceco favorea.

**Comecacearen gañean**

G. Cer da comecacea?

R. Da errecebicea Iesu Christo, ceñec sustentacen <156v> baytu arima eta ematen vicia beñere acabatuco eztena.

G. Cer ematen digu sacerdoteac hostia consagratua comecacen garadenean ematen digunean?

---

[1186] confessoreac] jat. *cofessoreac*.

R. Iesu Christo bera çeruan dagona gucia ossoric.

G. Orlatan, hostia consagratuan dago Iesu Christo bere buru santissimoarequi, aurpeguiarequi, bere escuequi eta oñequi çulaturic dauzquienequi gure amoreagatic?

R. Ala da eguia, gloria eta magestadearequi berarequi, nola baytago ceruan, dago bere personas ossoric hostia consagratuan eta calizan ere bay ardoa consagratus guero.

<157r> G. Cer podores eguiten da hori?

R. Iaungoycoaren podores, eguiten dituela emen milagro baçuc gucis andiac.

G. Cembat eta çer milagro dirade orihec?

R. Milagroac sacramentu sandu onetan eguiten dituenac Iaungoycoac dirade auniz, guciac errateco bear liçate auniz denvora, baya luça ezteçadan erranen ditut laur solamente.

G. Ceyn da lembicicoa?

R. Lembicico milagroa da eçe hostia aldarera ecarçen dena consagraçeco ariqueta consagratu arteraño, ezta berçeric baycic ogui guti bat, eta caliçan eçarçen dena ardo guti bat, baya sacerdoteac erraten dituen <157v> bezala consagracioco itçac, içulçen du oguia Iesu Christoren gorpuçean eta ardoa aren[1187] odolean, alaco maneras eçe gueros ezpayta han ez oguiric eta ez ardoric.

G. Bada, çer eguiten da oguiaren eta ardoaren sustancia?

R. Consagracioco itçen virtutes içulçen da oguia Christo gure iaunaren gorpuçean eta ardoa aren odolean.

G. Ceyn da bigarrena?

R. Bigarren milagroa da eçe Iesu Christo gure iauna, nola erran bayta articulo fedescoetan, igan çela çeruetara eta dagola jarriric bere ayta eternoaren escuyan, iaun hura bera, ceruan faltaric eguin bague, dago hostia consagratuan eta calizan ardoa consagratus <158r> guero.

G. Ceyn da irurgarren milagroa?

R. Irurgarren milagroa da eçe, içanica Iesu Christo gure iaunaren gorpuça andia eta gucis galanta, dago viciric eta ossoric bere arimarequi eta guregatic ixuri çuen odolarequi eta bere divinidadearequi hostia consagratuan, içanagatic ayn chiquia, eta calizan ardoa consagratus guero.

G. Ceyn da laurgarrena?

R. Laurgarren milagroa da eçe iaun hau berau dago munduan diraden hostia consagratu gucietan eta caliza gucietan ardoa consagratus guero. Bay eta parti baleçate hostia auniz parte, dago iaun hau berau <158v> hostian, gucian ossoric eta edoceyn çaticotan chiquia içanagatic.

G. Ohec milagro andiac dirade?

R. Ala da eguia diradela maravilla eta milagro gucis andiac, baya jaquin bear duçu eçe Iaungoycoac eguin deçaquela nay duen gucia. Eta, ala, bear

---

[1187] ardoa aren] jat. *ardoaren*; *ardo* absolutiboan espero dugu, ez genitiboan; beraz, bi aukera ikusten ditugu: bata hitz banaketa ez izatea egun den bezala eta, ondorioz, proposatu bezala 'ardoa haren' izatea; cf. beherago, *eta ardoa aren odolean*. Beste aukera zuzenean *ardoa* zuzentzea litzateke, *-ren* kenduta.

dugu sinestatu, nola confessaçen baytugu credoa erraten dugunean, «Sinestaçen dut Iaungoyco gucis poderosoan». Eta, ala, eguin deçaque nay duen gucia, çeren ezta arendaco gauza dificultoso denic.

G. Cerendaco eguiten ditu milagro ohec?

R. Guri ondasun eta merchede eguiteagatic.

G. Eta cer ondasun eta merchede <159r> eguiten digu?

R. Ondasun eta merchede eguiten digunac dirade gucis andiac, çeren dago sacramentu sandu onetan, erran den bezala, gu honraçeagatic eta gueuren necesidade gucietatic erremediaçeagatic.

G. Cembat gauza eguin bear ditugu comecatu baño leen orrembat ondasun erdesteagatic?

R. Bi gauza.

G. Ceyn da lembicicoa?

R. Lembicicoric eguin bear duguna da confessatu oroycen bagarade edoceyn becatu mortale eguinic leen[1188] confessatu eztugunes.[1189] Eta egon bear dugu baruric, janic eta edanic bague.

G. Ceyn da bigarrena?

<159v> R. Bigarren gauza eguin bear duguna da comecatu baño leen pensatu eta consideratu nola dagon hostia consagratuan Iesu Christo gure iauna, çeyn andre dona Mariac, aynguerueс, sandu eta sanda guciec respetu gucis andiarequi adoracen, alabaçen eta serviçaçen baytute, çeñec deseiaçen baytute guc erreçebi deçagun ongui, arracio den bezala. Eta, ala, otoyz eguin bear diogu digun bere faborea eta gracia ongui errecebiçeco, eta Virgina Mariari aynguеruequi eta sandu eta sanda guciequi vitartecoçale guerta daquigun.

G. Eta çer eguin bear dugu comecatus guero?

R. Luçaro eta sossegurequi <160r> Iaungoycoari graciac eman eguin digun ondasunas eta merchede ayn andias procuraçen dugula, alas eta ayn obligaturic utciçen gaytuenean, aren serviçuan gogotic eta sines empleaçera, beñere aren graciatic, adisquidetasunetic eta amoriotic apartatu bague.

**Oliaduraren gañean**

G. Cer da oliadura?

R. Oliadura da sacramentu bat Christo gure iaunac ordenatu baytu heriendaco ilçeco peligroan daudenean errecebi deçaten.

G. Cembat ondasun errecebicen du oliaçen denac?

R. Irur.

G. Ceyn da lembicicoa?

<160v> R. Lembicicoa da oliacen denac, ongui aparejacen dela, errecebicen du Espiritu Sanduaren gracia eta garvicen du aren arima, aguer dedin ill eta Iaungoycoaren aurrean, arracio den bezala, garviric.

G. Ceyn da bigarrena?

---

1188 leen] jat. *leem*.

1189 eztugunes] esk. *eztuguenes*.

R. Bigarrena da ematen baytio oliacen denari indar eta fabore denvora artan eritasunaren trabajuac pacienciarequi errecebiceco, arcen duela confiança andia Iaungoycoaren baytan bere misericordia andias emanen diola artaco bear duen favorea. Eta, alaver, demonioaren tentacioac, ceñec orduan bortizquiago tentacen baytu garayceco.

G. Ceyn da irurgarrena?

<161r> R. Irurgarren ondasuna[1190] da eçe oliacen denac bear badu gorpuçaren osasuna arimaren salvaceco, emanen bayçayo.

G. Orlatan, arracioa da christioec daucaten contu andia sacramentu hau errecebiceas?

R. Ala da eguia, eta ezta echeden bear ariqueta juyzioa galdu arteraño, baycic juicio eta sentido onean dagon bitartean bear du procuratu errecebicera.

Ordenacean errecebicen den sacramentuaren gañean eztut deus erraten, cerengatic ordenacen diradenec berec daquite çer eguin bear duten.

<161v> **Matrimonioaren gañean**

G. Cer ondasun ematen diote matrimonioac esconcen diradeney?

R. Ematen du gracia ezconduey ongui viciçeco.

G. Becatu mortalean dagola ezconçen denac çer becatu eguiten du?

R. Eguiten du becatu mortale andia, çerengatic gayzqui erreçebiçen baytu sacramentu sandu hura, eta argatic da ongui bi egunes edo irures leen confessaçea eta comecaçea, eta gracian dagola sacramentu hau errecebicea.

<162r> **Borzgarren capituloa obra misericordiascoen gañean**

G. Alas eta erran duçunean obra onac eguiten empleatu bear duguna, erran içaçu obra misericordiascoac?

R. Obra misericordiascoac dirade amalaur erran den bezala.

G. Cerengatic deiçen dirade obra misericordiascoac?

R. Ceren ezpaitirade zor justicias.

G. Noyz eguin bear ditugu obligacios?

R. Necesidade andiac diradenean persona discretoen eta adiçen çayotenen irudira.

<162v> **Seygarren[1191] capituloa**

**Espiritu Sanduaren doayen eta ayen provechuen gañean**

G. Erran içaçu Espiritu Sanduaren doayac?

R. Espiritu Sanduaren doayac çazpi, erran den bezala.

G. Cer gauzetaco launcen çayzquigu Espiritu Sanduaren doayac?

R. Elçeco Christioaren vicice oberenera, çeren dirade escalera bat bezala igateco, becaturic libratu eta obra onac eguines Iaungoycoaren serviçuan den vicice oberenera eta goytienera.

G. Certaco aprovechacen çaigu jaquintasunaren doaya?

[1190] ondasuna] jat. *oddasuna*.
[1191] Seygarren] jat. *seyngarren*; apeuan ere *seyn-* dator.

<163r> R. Iaquintasunaren doaya aprovechacen çaygu escogiçeco consideratu dugun gauza[1192] gueyen conveni çayguna. Eta, nola gueyen conveni çayguna bayta Iaungoycoaren serviçaçea gueuren arimen salvaçeco, ala jaquintasuna duenac onetaco eguiten ditu obra onac.

G. Eta obra onac eguiten eztituenac bere arima salvaçeco çer daqui?

R. Alacoari irudiagatic daquiela munduan diraden guciec baño gueyago, eztaqui deus conveni çayonic.

G. Cerendaco aprovechaçen çaygu entendamentuaren doaya?

R. Entendamentuaren doaya aprovechatçen çaygu[1193] adicera <163v> emateco eguiac, baytirade Iaungoycoari agradacen çayzquion gauzac eta aren magestadeac adicera ematen dizquigun misterioac.

G. Cerendaco aprovechatcen çaygu consejuaren doaya?

R. Consejuaren doaya aprovechatcen çaygu consideraceco eta pensaceco Iaungoycoac nai dituen gauzac eguin diçagun.

G. Cerendaco aprovechatcen çaygu fortalezaren doaya?

R. Auniz aprovechatcen çaygu, çeren gauza gucietan Iaungoycoa nay duenac serviçatu aurquençen du dificultate eta estorbu asco eçarcen dizquiola munduac, demonioac eta araguiac; guciec tentacen eta acometacen gaytuztela <164r> ezteçagun obratan eçarri gueuren proposito eta intencio onac. Baya orduan Iaungoycoac ematen dio aprovechatu nay duenari esporçu eta indar garaytceco dificultade eta estorbu guciac.

G. Cerendaco aprovechatcen çaygu piedadearen doaya, bayta urricaritcea?

R. Aprovechatcen çaygu Iaungoicoarequi gueuren gauzes componceco, ceren considera dezanac becatu mortale bat gastigaceagatic, daucala Iaungoycoac iffernuco pena, ceñes meachacen baytu. Urricaricen da becataria bere buruas eta procuracen du eguitera penitencia aurrera emendacen dela eta eguiten duela gauza gucietan aren <164v> vorondatea ambat gaytcetatic escapaceagatic.

G. Cerendaco aprovechatcen çaygu Iaungoycoaren beldurraren doaya?

R. Auniz aprovechacen çaygu, ceren considera deçanac[1194] bera den bezala, becatu mortalean dagon vitartean dagola Iaungoyco gucis poderosoaren etsaytasunean, beldurcen da eta procuracen du becatu mortaletic atracera hartan dagola gastiga ezteçan.

G. Erran içaçu oray Espiritu Sanduaren frutuac?

R. Espiritu Sanduaren frutuac dirade amabi, erran den bezala.

G. Cergatic erraten dirade Espiritu Sanduaren frutuac?

<165r> R. Erraten dirade Espiritu Sanduaren frutuac, cerengatic nola arbole batean den gustosoena bayta fruta. Ala, Espiritu Sanduaren frutuac dirade virtuten eta ondasunen oberenen gustosoenac.

---

1192 gauza] jat. *gauzan*.

1193 çaygu] jat. *çayga*.

1194 dezanac] jat. *dezanec*.

**Çazpigarren capituloa bienaventurançen gañean**

G. Erran içaçu bienaventurançac.[1195]

R. Bienaventurançac dirade zorçi, erran den bezala.

G. Cer gauza dirade bienaventurança ohec?

R. Dirade virtuten eta ondasunen eta Espiritu Sanduaren doayen obra andienac.

<165v> G. Nor dirade vorondates pobre diradenac?

R. Dirade vorondates hazienda menospreciacen dituztenac.

G. Nor dirade mansoac?

R. Dirade iraric eztutenac, eta aren señaleric here.

G. Nola gozacen dute lurra?

R. Beren buruen iaun diradela.

G. Nor dirade nigar eguiten dutenac?

R. Dirade mundu onetaco placerac eta gustoac billacen eztituztenac, baycic procuracen baytute eguitera penitencia eta beren becatues nigarr.

G. Nor dirade justiciaren gosse eta egarri diradenac?

<166r> R. Eguiten dutenac justicias eta caridades obligatu diradena.

G. Nor dirade misericordiosoac?

R. Urricaricen diradenac necessidadean daudenes, ez eçagunac içanagatic.

G. Nor dirade viotz garviac ditustenac?

R. Gauza gucietan eguiten dutenac Iaungoycoac nay duena eta onetaco beren apetitu gaystoen contra eguiten dutenac.

G. Nor dirade baquea dutenac?

R. Berequi eta bercerequi baquea dutenac.

G. Nor dirade bere baytan baquea dutenac?

R. Iaungoycoarequi ongui daudenac, eçe ohec dute <166v> baquea berequin eta procuracen dute berçec ere duten.

G. Nor dirade justiciarengatic perseguituac diradenac?

R. Perseguitu diradenac eta, alabaya, gustorequi eta gogotic sufriçen dituztenac Iaungoycoaren amoreagatic eguiten dizquioten injuriac eta agravioac, eta artan firme daudenac, nola eguin içandu bayçute iaunaren apostoloec.

G. Cerengatic obra ohec deycen dirade bienaventurançac?

R. Cerengatic ohec eguitean baytago mundu onetaco bienaventurança, eta dirade escalera bat bezala, ceñetatic elcen bayta erdeciçera ceruco bienaventurança <167r> beñere acabatuco eztena.

**Zorcigarren capituloa**
**becatu mortalen eta ayen contra diraden virtuten eta ondasunen gañean**

G. Erran içaçu becatu mortaleac.[1196]

R. Becatu mortaleac dirade çazpi, erran den bezala.

G. Ceren deyçen dituçu becatu mortaleac edo buruac?

R. Ceren baytirade buruac eta çañac ceñetatic atraçen baytirade auniz becatu.

[1195] bienaventurançac] jat. galdera ikurra dator aginduaren ondoren.
[1196] mortaleac] Galdera ikurra du jatorrizkoak.

G. Dirade becatu mortale sobervia eta avaricia guciac?

<167v> R. Ez guciac, baicic solamente Iaungoycoaren caridadearen eta proximo lagunaren amorioaren contra diradenac.

G. Eta noyz dirade caridadearen contra?

R. Noyz becatu ohes autsiçen bayta cembayt Iaungoycoaren mandamenturic edo Elizarenic.

G. Cembat maneras dirade becatuac?

R. Irur maneratan: bata da becatu originalea, berçea mortalea, berçea venialea.

G. Cer gauza da becatu originalea?

R. Becatu originalea da becatu hura çeyn heredaçen baytugu ayta Adan eta Evaganic arima Iaungoicoac <168r>[1197] criatu eta juntaçen den bezala amaren sabelean[1198] gorpuçarequi.

G. Cer gauza da becatu mortalea?

R. Deseaçea, erratea edo eguitea edo faltaçea çembayt gauza andi denean Iaungoycoaren leguearen contra.

G. Cergatic erraten da becatu mortalea?

R. Erraten da mortalea, çeren illçen baytu arima.

G. Nola illçen du arima?

R. Cerengatic becatu mortaleagatic galçen baytu eguiten duenac Iaungoycoaren gracia eta aren amorioa, bayta arimaren vicia.

G. Cer gauza da becatu venialea?

R. Ezpaytu illçen arima, <168v> baycic heriçen du.

G. Nola heritçen du?

R. Ceren flacacen baytu ongui eguiteco[1199] eta aparejaçen baytu becatu mortale eguiteco.

G. Ceren deyçen da becatu venialea?

R. Ceren facilquiro eguiten bayta eta barcaçen here bay.

G. Cembat gauzas barcacen da?

R. Leen erran den bedratçi gauzes.

G. Cer gauza da sobervia?

R. Apetitu eta deseo gaysto bat içateco berçeac baño gueyago.

G. Ceyn da soberviaren[1200] contra den virtutea?

R. Humildadea.

G. Cer da humildadea?

R. Sentiçea humilquiro bere baytan. <169r>

G. Cer gauza da avaricia?

R. Apetitu eta[1201] deseo gaysto bat hazienda içateco.

G. Ceyn da avariciaren contra den virtutea?

R. Liberal içatea.

---

1197 <168r>] jatorrizkoan <150> jartzen du, baina zalantza gabe hutsa da.

1198 sabelean] jat. *sebelean*.

1199 eguiteco] jat. *eguiteca*.

1200 soberviaren] jat. *sobeviaren*.

1201 eta] jat. *et*.

G. Cer da liberalidadea?

R. Inclinacio bat emateco duen haziendatic conveni denean eta bear den bezala.

G. Cer[1202] gauza da luxuria?

R. Apetitu eta deseo gaysto bat araguiarena luxuriaco gauzetan.

G. Ceyn da luxuriaren contra den virtutea?

R. Castidadea.

G. Cer da castidadea?

R. Luxuriaco gauzetan garvi içatea.

G. Cer gauza da ira?

R. Apetitu eta deseo gaysto bat mendecaçeco.[1203]

<169v> G. Ceyn da iraren contra den virtutea?

R. Manso içatea eta pacienciatan proximo lagunaren agravioac eta injuriac erreçebiçea.

G. Cer gauza da gula?

R. Apetitu eta deseo bat jateco eta edateco sobra.

G. Ceyn da gularen contra den virtutea?

R. Templança.

G. Cer gauza da templança?

R. Ez jatea eta ez edatea conveni den baño gueyago.

G. Cer da invidia?

R. Tristura bat eta damutasun bat bercearen ondasunas.

G. Ceyn da invidiaren contra den virtutea?

R. Caritatea.

G. Cer da caritatea?

<170r> R. Plazer arcea bercearen ondasunas, eta damu aren gayças gueurenas bezala.

G. Cer gauza da pereza?

R. Tristurarequi ibilcea eta arlote içatea Iaungoycoaren cerviçuco gauzetan.

G. Ceyn da perezaren contra den virtutea?

R. Diligencia.

G. Cer da diligencia?

R. Fite gogotic eta gozorequi Iaungoycoaren cerviçuco, eta ari agradacen çaizquion gauzac eguitea.

### Bedracigarren capituloa
### virtute teologalen eta cardinalen gañean

G. Erran içaçu virtute teologalac.[1204]

<170v> R. Virtute teologalac dirade irur, erran den bezala.

G. Cer gauza da fedea?

---

1202 Cer] jat. *Cear*.

1203 mendecaçeco] jat. *mendeçaçeco*. Ik. zuzenketaren arrazoia iruzkinean.

1204 teologalac] jat. esaldiaren amaieran galdera ikurra dago.

R. Da arguitasun bat Iaungoycoac ematen diguna, ceñeças icusi bague sinestatcen baytugu Iaungoycoac eta Elizac erraten dizquigunac diradela fedesco gauzac.

G. Cer gauza da esperança?

R. Esperança iduquicea Iaungoycoaren baytan emanen digula gloria eta aren erdesteco bear ditugun gauzac.

G. Certan dago gure bienaventurança?

R. Iaungoycoa bera icustean, oneristean eta arças gozacean, beti beñere acabatu bague.

G. Cer medios erdesten da?

<171r> R. Iaungoycoaren gracias eta Christo gure iaunaren meregimentues eta gure obra ones.

G. Cer da caritatea?

R. Oneristea Iaungoycoa gauza gucien gañean eta proximo laguna gueuroc bezala.

G. Erran eçaçu cembat diraden virtute cardinaleac.

R. Virtute cardinaleac dirade laur, erran den bezala.

G. Cer oficio du prudenciac?

R. Medio on bat içatea gauzetan.

G. Cer oficio du justiciac?

R. Nori berea ematea.

G. Cer oficio du fortalezac?

R. Edoçeyn peligrotan jarriçea, ill bear badu here, conveni denean Iaungoycoaren <171v> serviçaçeagatic eta bear denean edoçein trabaju sufriçea.

G. Cer oficio du templançac?

R. Guençea sobra jatea eta edatea eta araguiaren luxuriasco deseo gaystoac.

G. Ceyn da virtute gucietatic andiena?

R. Caritatea, ceñec guciey ematen baytiote vicia.

G. Ceyn persona da Iaungoycoaren aurrean[1205] oberena eta sanduena?

R. Biz nor nay caritate eta amorio Iaungoycoarequin gueyen duena.

G. Eta norc du caritate eta amorio gueyago Iaungoycoarequi?[1206]

R. Iaungoycoaren mandamentuac obequien begiraçen <172r> dituenac.

G. Evangelioco consejuac çembat dirade?

R. Irur: vorondates pobre içatea eta castidadesco estadoa[1207] eta obedienciaren azpian vicicea.

G. Certaco cerviçacen dira conseju ohec?

R. Iaungoycoaren mandamentuac obequiago beguiraceco.

---

[1205] aurrean] jat. *aurrã*.
[1206] Iaungoycoarequi] jat. *Iauangoycoarequi*.
[1207] estadoa] jat. *estadea*.

## Amargarren capituloa
### arimaren potencien eta sentido corporalen gañean

G. Erran içaçu arimaren potenciac.[1208]

R. Dirade irur, erran den bezala.

G. Certaco eman digu Iaungoycoac <172v> entendamentua?

R. Eçagu deçagun nor den, eta aren gauzetan pensa deçagun.

G. Certaco eman digu memoria?

R. Oroyt gaytecen aren legueas cumpliceco aren vorondatearequi eta eguiten dizquigun ondasunes graciac emateco.

G. Certaco eman digu vorondatea?

R. Oneritsi deçagun eta meregiçen[1209] dugula eguin deçagunaren vorondatea.

G. Erran içaçu sentido corporaleac, erran nay dut gorpuçarenac.

R. Dirade borz, erran den bezala.

G. Certaco eman dizquigu sentido ohec? <173r>

R. Gucies serviça deçagun Iaungoycoa gauza gucietan.

## Amecagarren capituloa
### arimaren etsayen gañean

G. Erran içaçu arimaren etsayac.[1210]

R. Dirade irur, erran den bezala.

G. Cerengatic deycen ditugu ohec arimaren etsayac porventura naztugularic becaturic eraguineraci[1211] draçaquegute?

R. Ez, iauna. Baya eguiten dute al daguiten[1212] gucia tentaçen gaytuztela eguin deçagun becatu, eta, ala, gal gayteçen. Argatic diraden etsayac.

G. Nola bada Iaungoycoac <173v> […]çiçen ditu tentacioac?

R. Gu probaçeagatic,[1213] eta contrarioac ditugula atra gaytecen aren savorearequi, ceyn ezpaititu beñere faltacen meregimentu auniçetan vitoriarequi, eta ala […]coroa eta premio […] deçagun.

G. Orlatan, Iaungoycoaren saborearequi libra gaytezque etsay ohetatic?

R. Bay, iauna; eta galaynqui.

G. Nola tentaçen gaytu demonioac?

R. Ecarçen dizquigula pensamentu gaystoac eta landatu estropeçuac eçarris[1214] eror gayteçen.

G.[1215] Cer erremedio pensamentu gaystoen contra?

R. Gurutçe sandua eta hur <174r> bedeycatua, Iaungoycoari otoyz eguite[a], ayeta[…] libra gayçan, eta gueureganic leen baño leen egosi.

G. Ocasio gaystoen con[…] cer erremedio da?

---

[1208] potenciac] jat. galdera ikurra dator.

[1209] meregiçen] jat. *mergiçen*.

[1210] etsayac] jat. galdera ikurra dator.

[1211] eraguineraci] jat. *erāguineraci*. Agidanean, oker dago diakritikoa.

[1212] daguiten] jat. *daguitec*.

[1213] probaçeagatic] jat. *probaçeaçeagatic*, duplografia.

[1214] eçarris] jat. *ecarris*.

[1215] G.] jat. *R.*

R. Erremedioric andie[…] eta oberena da ayen igues egitea, eta, ala, […] paçea, eta Iaungoyco[…] otoyz eguitea ayetatic […]bra gayçan.

G. Munduac nola tentac[en] gaytu?

R. Vanidades eta munduac nay duen bezala vici diradenec erraten eta eguiten dituzten gauzac memorian ecarriz.

G. Cer erremedio ayen contra?

R. Consideraçea Iaungoycoaren leguean, eta sanduec <174v> […] eguin çuten ala guc ere […]uiteco.

[…] Araguiac nola tentacen […]tu?

[…] Araguiaren inclinacio […] apetitu gaystoes.

[…]er erremedio da ayen […]tra?

[…]aungoycoaren graciarequi batean, obra onac […]uitea, eta ayetan ocupa[…]ric egotea, ceyn digula […]aungoyco gure iaunac bere misericordia andias. Ala dela.

*LAUS DEO*

### *2.4.1.2.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, nabarmentzekoa da txistukari afrikari eta igurzkariak bereizteko saiakera, nahiz eta sistematikoki egiten ez duen. Horrela, afrikari bizkarkaria islatzeko hiru digrafo baliatzen dira: <tz>, <tc> eta <ç>. Hauek adibide batzuk: *itzic* (85r), *utci* (84r), *aytçetic* (84r). Apikarirako <ts> eta <tſſ> erabiltzen dira: *evatſſi* (88v), *etſſayac* (91v), *erdetsico* (93v). Nolanahi ere, esan dugun bezala, afrikatu eta frikarien bereizketa grafikoa ez da sistematikoa eta, ondorioz, *gayçaçu*, *gayçetic*, *auniçec* (84v) gisako adibideak ditugu. Bestalde, <g> grafemak igurzkari sabaikaria islatzen bide du *igilic* (149v) adibidean, baina ez dago garbi zer den *meregimentuec* (98v), *meregi* (*passim*) adibideetan. Kasu batzuetan, garaiko liburu argitaratuetan ohi denez, bokal ondoko sudurkaria islatzeko, kontsonanteari dagokion grafemaren ordez, bokalak < ˜ > diakritikoa darama. Amaitzeko, testuko zenbait <h> espletiboak dira: *here* (*passim*). Beste batzuk *u*-ren balio bokalikoa islatzeko izan daitezke: *hur* (173v). Ustez hasperena islatzen duen <h>-rik ere badago, beheraxeago ikusiko dugunez.

Fonologiari dagokionez, bokal bikoitzik ez da ageri. Dena dela, sistematikoki *leen* (*passim*) erabiltzen du. Horrezaz landa, *oa-/ua-* hasieradun hitzetan *g-* gehitzen da: *goarcen* (147v), *guarçen* (151v). Bokalekin jarraituz, sinkopa indartsu egiten da: *atraçen* (93r), *onlacoendaco*, *bedrazi* (94r), *Trintate* (97r, 97v), *onlaco* (97v), *orlatan* (*passim*), *bapedraren* (116r). Bestalde, *ai* > *a* gertatu da zenbait kasutan: *ambat* (*passim*), *bayçazquio* (156r), *becambates* (*passim*).

Kontsonanteez den bezainbatez, **j-* zaharraren ahoskera sabaikaria dela dirudi: *Iaungoicoaren* (88r), *iuramenturic*, *iayac* (88v), *iniuriac* (90v), *iatean* (91r). Bestalde, /i/ bokalaren eta /Vj/ diptongoaren ondoren, /n/ eta /l/ sabaikaritu egiten dira: *erreñua* (84r), *gañean* (88v), *illen* (88r), *villosiric* (89v). Kontsonante multzoei dagokienez, *-rz-* mantentzen da: *berçe* (85r), *Borzgarrena* (89r). Horrezaz landara, testuko <h> batzuek hasperena mantentzen zela erakuts dezakete, Julen Manterolak (2015: 507-511) frogatu bezala. Horren adibide dirateke, besteak beste, *ohec* (*passim*) eta *orihec* (*passim*). Nolanahi ere, *fase sparita*n dago hasperena ordurako, eta batzuetan *-g-* gehitu da bokal artean: *ago* (*passim*). Hitz hasieran herskari ahostuna dugu *be-*

*catu* (*passim*) eta *guençen* (153v) adibideetan. Badirudi *f* > *p* aldaketa gertatu dela *esporçaçeco* (154r) adibidean. Era berean, *ercal* (114v) aldaera dugu.

Azkenik, maileguetan *-ale* atzizkiaren aldaera zaharra mantendu da: *espiritualeac*, *corporaleac* (89v), *mortaleac* (90v), *cardinaleac* (91v), *mortale* (150r). Bestalde, latinezko *-ione* > *-oi* > *-io* gertatu da *arracio* (*passim*) adibidean. Azkenik, Nafarroan ohikoa den *-on* bukaera egiten du: *ladronec* (98r), *millonac* (124r).

Morfologiara jauzi eginda, artikulu hurbila aurkitzen dugu: *Ni becatariau*, *confessoreorri* (95r). Dena dela, mugagabea maiz erabiltzen da: *falso testimonio* (150r), *gueçur erratea* (150r, 150v), *becatu beniale*, *becatu mortale* (150v) adibideetan mugagabea agertzen da. Bestalde, *-ko* txikigarria erabiltzen da *çaticotan* (158v) adibidean.

Izenordain indartuei dagokienez, *gueuroc* (89r) agertzen da. Izenordain posesiboen artean, aldiz, indartuetan lehen pertsona pluralean *gueuren* (84r) aldaera pleonastikoa agertzen da beti; singularrean, aldiz, *neure* (95r) dago. Lehen pertsonako izenordain posesibo arrunta *ene* (95) da beti. Erakusleetan *ohec* (*passim*) da hurbileko erakuslea. Ezezko polaritatea duten izenordainen artean *ior*, *iori* (88v) aurkitu ditugu. Zenbatzaileetan *bidatan* (88v) eta *bidac* (108v) agertzen dira, 'bi' zenbakiari dagokionez; eta 'hiru' eta 'lau' zenbatzaileei dagokienez, *irurgarrena*, *laurgarrena* (89r) *-r*-dun aldaera zaharrak ditugu. *Andi* deklinatzerakoan mugagabea erabiltzen da: *anditacoa* (126v). Bestalde, *ceymbayt* (139v) aldaera dugu. Moduzko adberbioak egiteko, *-kiro* atzizkia erabiltzen da: *cumplituquiro*, *principalquiro* (130v). Era berean, *-ti* dugu lekuzko adberbioak sortzeko: *beytiena* (109r) *goyti*, *goytiago*, *goytien*, *goytienera* (109v).

Ergatibo plurala egiteko, *-ek* aldaera erabiltzen da: *gayzqui eguiten dutenec igues eguiten baytute* (98r), *G. Norc eguin çuen credoa? R. Apostoloec* (101v), *irur personec baytute esencia* (102v). Bestalde, goi-nafarrerazko hizkera anitzetan ohi denez, instrumentalean aldaera apikaria erabiltzen da beti: *latines*, *erdaras* (84v), *erranes*, *guçias*, *gracias*, (85r), bai eta instrumentalaren gainean eraikitako bestelako kasuetan ere: *egunorosco* (84r), *misericordiascoac* (89v), *eguiascoa* (96r). Erakusleen kasuan, *onesas* (96r), *ohessas* (146r), *ayhessas* (155v) ditugu. Soziatiboan hegoaldeko goi-nafarreraz nagusi den *-reki* aldaera baliatzen du nagusiki: *çurequi* (85r), *devociorequi* (94r), *confiançarequi* (98r), *gueyagorequi* (99r). Nolanahi ere, salbuespen hauek ditugu: *guciarequin* (129r, 149v), *berequin* (166v), *Iaungoycoarequin* (171v). Bizidunen inesiboa eta honen gainean eraikitakoak sortzeko, *bayta* duen berrikuntza erabiltzen du Beriainek: *Iaunaren baytan*, *Mariaren baytatic*, *Espiritu Sandua baytan* (85v). Nolanahi ere, *Virginarenganic* (106r), *berceanganic* (114v) forma zaharragoak ere lekukotzen dira. Bestalde, bizidunen ablatiboan beti dakar *-gana*: *guregana* (84r), *arengana* (108v) *Iaungoycoarengana* (127v). Inoiz ez du *baytara* gisakorik erabiltzen. Pluraleko ablatiboan *-etatik* —*gucietatic* (84v)— eta *-etarik* —*illetaric* (85v)— biak lekukotzen dira, baina *-etarik* oso gutxitan dauka bestearen aldean. Partizipioen gainean eraikitako adberbioak sortzeko, *-ika* eta *-ikan* erabil daitezke: *içanica*, *eguinican* (105r), *eguinica* (106v).

Aditz morfologiara pasatuz gero, partizipio pleonastikoak aurkitzen ditugu: *içandu* (85v) eta *egondu* (137v), baina *içan* (92r) eta *egon* (159r) ere agertzen ditu Beriainek. Geroaldia egiteko *-en* morfema baliatzen da *-n*-dun partizipioa duten aditzekin: *erranen* (84v), *ioanen* (85r), *içanen* (93r). Aldiz, *-ko* dago gainerakoekin: *etorrico* (85v), *gozatuco* (93v). Aditz-izenez den bezainbatez, *galdeguiçen* (95v) agertzen da, *-tzen* atzizkiarekin; aldiz, arkaismo gisa, fosildurik *erortera* (122r) erabiltzen da bitan.

Gainera, *-i*-z bukatzen diren hiru silabatik gorakoetan partizipioa hartzen da oinarri: *autsicen* (142v bi aldiz), *autsiçen* (167v), *oneristen* (142r, 142v), *erdeciçera* (166v) baina *erdestera* (135v). Batzuetan partizipioak adjektibo gisa erabiltzen direla dirudi, gaztelaniaren eraginez, ziurrenik: *becatu eguines* (*passim*).

Adizki jokatuei dagokienez, aldaera pleonastikoak dira nagusi *izan* aditzean: *dirade* (*passim*) da nagusi, baina *dira* ere lekukotzen da. Bigarren pertsonan *çara* eta *çarade* (*passim*) agertzen dira. Gehienbat *garade* (*passim*) lekukotzen da, baina behin *ezcara* (114r) dago. **Edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da beti: *dugunean* (84v), *dugu* (85r). Era berean, iraganeko adizkietan *-ind-* dago: *cinduen* (100v), *guinduen* (107v), *guinduenas*, *guinduen* (154r). *Joan* aditzaren forma jokatuak *doayenari*, *doayen* (89v) gisako adizki nafarrak ditugu. *Eduki*-ren trinkoa ere bada, NOR-NORI-NORK sailekoa: *diaducote* (141v). Zenbaitetan **iron* aditzaren trinkoa lekukotzen da: *ambat diroquenic* (135v), *gueyen diroquenari* (136r), *ala ecin diroquenac* (158r). Gutxi, baina subjuntibo trinkoaren adibiderik topa dezakegu testuan: *otoyz eguiten draucot andre dona beti virginari […] eta çuri ayta confessoreorri çaraten Iaungoycoaren aurrean ene otoyzguille* (95r), *daquigun garadela christioac* (97r), *nay du iaun onec guc gueuren partetic dugun damu becatu eguines* (108v), *escacen diot dagon emen lurrean* (130r).

Bestalde, iraganeko *-n* ez da sistematikoki ezabatzen, eta bietariko adibideak ditugu: *jayo çen* (85v), *criatu çuen* (99r), *eguin cen* (104v), *juntatu cituen* (105v), *eguin ce* (104v, 105r), *içandu bayçue* (106r), *nay içandu çue* (107r), *bayceude* (109v), *baitcego* (110r). Indikatiboko NOR-NORK saileko adizkietan *a* > *ai* gertatu dela dirudi: *nayçayo* (95r). NOR-NORI-NORK sailean nagusiki (93 aldiz) *-i(n)-* erroa erabiltzen da: *barcaçen dizquiotegun* (84r), *erraten dizquigun* (85r), *ematen digu*, *barcaçen dizquigu* (103v). Hala ere, inoiz edo behin (4 aldiz), **eradun* agertzen da: *erraten draugu* (84v), *eguiten draucot* (95r) (ik. E § 2.3).

Indikatibotik landako perifrasietan, NOR sailean **edin* aditzaren *dedin* (*passim*) aldaera da nagusi, baina *ill badadi* (125r), *husa ezpadidi* (153r) aldaeren adibide bana ditugu. NOR-NORK sailean **ezan* agertzen da: *adora deçagula* (88r), *beguira diçagula* (88v). Bestalde, **ezan* aditzaren hirugarren pertsonako adizkiek amaierako *-a* galtzen dute: *eguin badez* (141v, 143v), *ebatsi bades* (148r). Hirupertsonalean, aldiz, **erazan* agertzen da: *eman draçaguzu*, *barca drazquiguçu* (84r), *erayqui eztrazogula* (88v). Bestalde, aditzoina erabiltzen da *-tu*-z amaitutako perifrasietan: *santifica bedi*, *libra gayçaçu*, *barca drazquiguçu* (84r). Aldiz, besteetan partizipioa erabiltzen da: *etorri bedi* (84r), *icusi deçatenean* (98r) (ik. E § 2.4). Azken adibide horrek erakusten du perifrasi zaharraren aztarrenik geratzen dela mendeko perpausetan: *icusi deçatenean* (98r), *acaba dedinean* (106r). Ahaleran, *-teke* pleonastikoa ageri da *diteque* (*passim*) kasuan, baina *manea lite* (102r), *vici lite* (102v), *ill çatea* (106r), *libratu bayçatea* (107r), *libratu ciratela* (123r), *ecin baytate* (125v) adibideetan forma zaharra mantentzen da. Baldintzazko perpausetan perifrasi zaharra erabiltzen da: *jaquin ezpadezagu* (100r), *lagun ezpalequio* (102v), *ill badadi* (125r), *eguin badeçaçu* (126v), *husa ezpadidi* (153r), *aurquen badedi* (153v).

Pluralgileei dagokienez, *-te*-ren hedadura nabarmena da: *ezpaytuzte* (88r), *dute* (*passim*), *lituzquete* (108v), *çayzquiote* (115v), *diote* (*passim*), *bayçayote* (123r). Bestalde, *-zki* pluralgilea erabiltzen da *eduki* aditzaren trinkoetan: *ordenaturic dauzquien* (108r), *eracutsiric dauzquien*, *prometaturic dauzquigun* (141v), *çulaturic dauzquienequi* (156v).

Oro har, ez da gertatzen aditzen uzkurdurarik, baina, behin bada ere, *naztugularic* 'nahi ez dugularik' (173r) agertzen da.

Sintaxi aldetik, azpimarratzekoa izan daiteke TO-GEN egituraren erabilera: *vicien eta illen juzgaçera* (85v), *herien visitatçea* (89v). Edonola ere, bada salbuespenik: *gauza ohec jaquitera* (100r) eta *gauzac salvaceco* (101r), besteak beste. Halaber, hainbat aditzek hartzen duten osagarritzat aditz-izena adlatiboan agertzen dira: *utci tentacioan erorcera* (84r), *jatera ematea* (90r). Hurrenkerari dagokionez, izenlaguna eskuinera duten izen sintagmak badira: *gozo eta contentu arimarena* (93r), *Iaungoyco eta guiçon eguiascoa* (96r), *Iaungoyco gurea* (96v), *arra concienciarena* (123r). Bestalde, *berze* perpausaren hasieran jarri ohi da, ez beti dagokion izenaren aurretik: *berce gende mota onlaco guciac* 'jende mota onlaco berze guziak' (97r-v), *berce Elizaco oracioac* 'Elizako berze orazioak' (100r, 127r). Antzeko hurrenkera erakusten du *bere* posesiboak ere: *eguin baytio agravio bere criatu çuen iaunari* (154v). Denborazko perpausak egiteko, *-enean* erabiltzen da perifrasi zaharrarekin: *icusi deçatenean* (98r), *mundua acaba dedinean* (112v). Erlatiboari dagokionez, badira izenaren eskuinera dauden adibideak: *passio passatu çuenas* (108v), *Iffernuco beñere acabatuco eztiraden penac* (116v), *becatu eguin citustenes* (123r), *gauza Iaungoycoari escatu bear çayzquion guciac* (128r), *becatu eguin dituen guciac* (156v). Ezeztapena egiteko, gaztelaniazko *ni ... ni* egituraren pare, *ez ... ez* agertzen da: ***ez*** *iffernua acabatuco da,* ***ez*** *an dagonaren arima ez gorputça eztirade beñere nay luquetelaric illen* (123v). Moduzko perpausetan *-elarik* erabiltzen da: *luquetelaric* (123v), *erran cituen Santa Isabelec cegolaric Espiritu Sanduas beteric* (136v), *naztugularic* (173r). Horrekin batera, *ez nayes* 'nahi ez zuela' (108v) gisako egitura dugu moduzkoetan. Konparaziozko perpausetan *eçes* erabiltzen da: *gauza acertatua da aborreci deçagun becatua gueyago eçes berce gauza guciac* (126r).

Linschmann-Aresti legeari dagokionez, ondo betetzen dela dirudi: *guc barcaçen dizquiotegun bezala gueuren zorduney* (84r), *dagola jarriric bere aytaren escuyetaco aldean* (100v).

Lexiko aldetik, nabarmentzekoa dirudi *conversaturic* (106v) hitzaren agerrera 'bizi izanik' esanahi arkaikoarekin. *OEH*ren arabera euskararen tradizio idatzian Leizarragak, behin baino gehiagotan, eta Beriainek, behin, erabili dute hitz hori esanahi horrekin. Bestalde, *videro* (109r) hitzaren lekukotasun bakarra da, eta *OEH* 'bidezki' esanahia ematen dio. Gainera, *baliotuco baçaigu* (107v) adibidean dakuskegunez, *baliotu* aditza erabiltzen da 'baliagarri izan' esanahiarekin. Behin bada ere, 'atxiki' hitzaren aldaera *eutzeki* bide da, *euçequico* (123r) adizkiak iradokitzen duenez; *OEH*n ez da aldaera hori jaso. Bestalde, *comecace* eta *começaçe* aldaera herskariduna eta txistukariduna agertzen dira. Dena dela, bigarrena hutsa dela dirudi: bizpahiru aldiz bakarrik agertzeaz gain, <ça> ondoan <çe> agertzen denetan soilik dugu; sekula ez da lekukotzen ***começatu* edo ***começace*-ren gisakorik. Beraz, ondoko <ç>-ren kausaz sortutako hutsa dirudi. Huts bera bide dugu *mendeçaçeco* (169r) adibidean ere.

Bestalde, <c> eta <ç> grafemen arteko txandaketa dugu *beçambatez* eta *becambates* hitzetan; ez dakigu ahoskerari dagokion eta, beraz, ez dakigu bietara ahoska zitekeen ala inprentan egindako huts grafikoa den.

Ikusitakoez gain, aipagarri dirateke ondoko hauek ere. Nafarroan ohiko den *ohatcetic*, *ohatcera* (97v) hitza agertzen da. Bestalde, *vitartecoçale* (*passim*) erabiltzen da 'bitartekari' esateko. Gainera, *aufer* (142v) dago 'alfer' adieran. 'Beldurtzen' esanahiarekin *lotçacen* (98r) dakar Beriainek, ekialde zabalean ohi denez. *Laureco* (143v) (ik.

*OEH* s.v. *lauko*) agertzen da txanpon balioarekin. Halaber, ekialde zabalekoa den *fite* (*passim*) eta Nafarroan ezagun den *aurquen* (153v) ditugu. Beriainen obretan, *eçagun* (130r) aditz gisa agertzen da. Horrez gain, badirudi *aditzera -i(n)-* aditz lokuzioa lekukotzen dela 'aditzera eman' adieran: *cindidan adicera* (108r). 'Usaindu' esanahiarekin *urrin eguitea* (91v) erabiltzen du; lekutasun idatzietan gutxi lekukotzen den lokuzioa bide den. Behin badakar ere, *ipispicuaren* (94r) aldaera erabiltzen du. 'Kopeta' esanahiarekin *becoqui* (*passim*) dakar Beriainek. Hegoaldeko goi-nafarreraz lekukotzen den *aylcina* (104r) ere agertzen da. Bestalde, *eraici* (110r) agertzen da 'eraitsi' esateko. Nafarroako testuetan ohikoa ez bada ere, Beriainek *chispilduco* (113r) dakar 'kiskaliko' esateko; hain zuzen ere, *OEH*ren arabera (s.v. *zizpildu*), Beriain da hitz hori erabiltzen duen autore zahar bakarra. *Acarric* erabiltzen du 'errietarik' zentzuan; ohart gaitezen Axularren liburuaren ale bati goi-nafarreraz egindako oharretan *liskar eta beltzuri*-ren ordez dagoela hitz hori (ik. *OEH* s.v. *ahakar*). *OEH*ren arabera (s.v. *memorian ekarri*), Beriainen *memorian ecarriz* (174r) da egitura horren lekukotasun bakarra. Azkenik, *demonia* aldaera bitan agertzen da: *demoniac* (109v) eta *demonia* (122r). Halere, hutsa izan daiteke.

### 2.4.2. Frantzisko Elizalde

Dakigula, XVIII. mendearen lehen erdialdean liburu bakarra argitaratu zen goi-nafarreraz: Frantzisko Elizalderen *Apecendaco doctrina christiana uscaras*. Iruñean argitaratu zen Alfonso Burgueteren alargunaren etxean 1735ean. Liburuaren azalean esaten denez, Elizalde Jesusen lagundiko erretore misiolaria zen, teologia moraleko maisu, erregeren predikadore eta Espainiako erreginaren alargunaren konfesore.

Elizalderen bizitzaz dakigun gutxia Ursúak (1994) egindako ikerketari esker dakigu. Gesalazko Muzkin jaio zen, baina ezin jakin dezakegu zehazki zein urtetan izan zen, bataio agiria galdurik baita. Hala ere, ziurrenik, 1646 eta 1654 bitartean jaio zen. 1668 eta 1670 bitartean Jesusen lagundian sartu zen, eta 1689an egin zuen boto-aitorpena. Ursúak (1994: 73) laburbiltzen du ondoko bizitza:

> A partir de su profesión solemne en 1689, enseñó gramática durante ocho años, dedicándose después a los ministerios apostólicos. Más tarde, y a lo largo de nueve años, fue confesor de la Reina Dª. Mariana de Neuburg, esposa de Carlos II; fue también rector del Colegio de Segura de la Sierra, en la provincia de Jaén y falleció en Madrid el 27 de marzo de 1733.

Jarraian muzkitarrak idatzi zuen obraren edizio kritikoa dakargu.

#### *2.4.2.1. Apecendaco doctrina christiana uscaras*

Elizaldek idatzi zuen *Apecendaco doctrina christiana uscaras* liburuak 1735ean ikusi zuen argia, egilea bera hil ondoren. Liburua garaiko beste dotrinen gisa berekoa da, galde-erantzunez osatua eta, orotara, 96 orrialde ditu. Ez ditu testu nagusiaren aurretik joan ohi diren aprobazio, onespen, baimen eta gainerakoak. Amaieran *aisquide chiquiendaco* ohar bat dakar. Liburuaren izenburuaren bigarren parteak argi uzten du zein den liburuaren benetako helburua: «Apecec eta leitcen daquitenec eracusteco eta explicatceco uscaldun puro leitcen estaquitenei, aiec aitus eta memorias icasteco».

Dakigularik, euskalarien artean Larramendi da liburua aipatzen duen lehena. Hain zuzen ere, *Corografía de Guipúzcoa* liburuan aipatzen du Beriainen testuarekin batera. Gaur egun ondoen ezagutzen dugun alea XX. mendearen amaiera aldera aurkitu zuen Patxi Salaberri Zaratiegik (1994a) Iruñeko Diputazioaren liburutegian. Dena den, dirudienez, bada beste ale bat. Irigaraik (1963c) Elizalderen liburuaren atariaren argazkia dakar, eta ez da Nafarroako liburutegian Patxi Salaberrik (1994a) aurkitu zuen bera. Biak berdintsuak diren arren, «urte» eta «1735» ez daude kokagune berean, nahiz eta bietan dauden erdiko irudiaren ezker eta eskuin aldean. Bestalde, Irigaraik emandako irudian eskuz idatzitako zerbait dago, baina ez da ondo ulertzen. Aitzitik, ez da halakorik Nafarroako liburutegiko alean.

Testuaren edizioa ezagutzera ematearekin batera, Salaberrik berak (1994a) testuko hizkeraren azterketa egin zuen, eta eskualde bereko beste lekukotasun ezagun batzuekin erkatu zuen. Urte berean eta Salaberriren azterketaren ondoan, *Fontes Linguae Vasconum* aldizkarian liburuaren faksimilea argitaratu zen. Egun Nafarroako Liburutegi Digitalean ikusgai dago alea eta, hain zuzen ere, horretan oinarritu gara gure edizioa prestatzeko.

*2.4.2.1.1. Testua*

<1> **Apezendaco dotrina christiana uscaras**

**Apecec eta leitcen daquitenec eracusteco eta explicatceco uscaldun puro leitcen estaquitenei, aiec aitus eta memorias icasteco**

Eguin du Jesusen compañiaco erreligioso erretore missionero, theologia moraleco maistru, erregueren predicadore eta Españaco erreinaren alargunaren confessore Francisco Elizaldec.

Urte 1735

Conseju errealaren eta ordinarioaren licenciarequi.

Iruñan, Alfonso Burguete alargunaren echean. Eta salcen da Hospital Generalean.

<3> **Dotrina christiana uscaras**

Christio fiela, obligacio daucazu eta arracio devocio andia iduquicera ceure viocean gurucera. Christo il ce gurucean, il biar[1216] dugu arren fedean, il ce gure salvaceco, becatutic gu atraceco. Eguin[1217] vear dugu costumbrea beti eguitera gurucea, nondic vear da ceñatu, alaber santiguatu. Cer da, vada, ceñacea? Irur guruce eguitea: copetan lembicicoa, agoan ere bigarrena, irugarrena bularretan, viozaren ondoan. Copetan libraceco eta gu apartaceco pensamentu gaistoetatic, agoan ere itzetatic, bularretan gu guardaceco obra gaisto ez eguiteco. Cer da, orai, santiguacea? Guruce andi bat eguitea <4> copetatic

1216 biar] jatorrizkoan hala dator, baina *bear* aldaera da nagusi testuan.

1217 eguin] itxuraz, *izan* behar bide luke, baina ondoan duen *eguitera*-ren eraginez ager liteke *eguin*. Hala ere, kasu bakarra denez, ez dugu zuzendu.

bularretaraño, soin batetic berceraino. Eguin zazu onelasse,[1218] eta nic eguinen dut berlasse.

**Ceñacea eta santiguacea**

Gurutce sanduaren señaleagatic [Gurutzea]. Gure etsayetatic [Gurutzea] libera gaitzazu, gure Jaun eta Jangoycoa [Gurutzea]. Aitaren eta Semearen eta Espiritu Sanduaren icenean. Amen Jesus.

**Alabatua**

Alabatua dela aldareco sacramentu sandua eta andre dona Maria Virginaren concebicioa becatu originaleric bague, bere lembecico istante naturalean. Amen Jesus.

Berce bat

Jangoycoac salva zaizala, Maria, Aita Jangoycoaren alaba.

Jangoycoac salba zaizala, Maria, Seme Jangoycoaren ama.

Jangoycoac salva zaizala, <5> Maria, Espiritu Sanduaren esposa.

Jangoycoac salva zaizala, Maria, Trinitate Sanduaren templo eta sagrarioa.

Jangoycoac salva zaizala, Maria gracias betea, becatu originaleric bague concebitua, ceure lembecico istante naturalean. Amen Jesus.

**Pater nosterra edo aita gurea**

Aita gurea ceruetan zaudena, santifica bedi zure izena. Etorri bedi zure erreñua. Cumpli bedi zure vorondatea, ceruan becala lurrean ere. Eman dazaguzu egu[1219] gueuren egunorosco oguia. Eta barca dazquiguzu gueuren zorrac, guc barcacen ditugun bezala gu zor gaitustenei. Eta ezcaizazula utzi tentacioan erorzera, baicic libera gaizazu gaicetic. Amen Jesus.

**Ave Maria**

Jangoycoac salva zaizala, Maria gracias betea. Jauna <6> da zeurequi. Bedeicatua zara emaste gucien artean, eta bedeicatua da zure sabeleco fruitua, Jesus. Santa Maria, Jangoycoaren ama, otoiz eguin zazu gu becatariengatic orai eta gure eriozeco orduan. Amen Jesus.

**Credoa**

Sinestacen dut Jangoyco aita gucis poderoso, ceruaren eta lurraren criazalearen baitan eta gure jaun Jesu Christo bere seme bacarraren baitan, cein concebitu baize Espititu Sanduaren obras. Jayo ce andre Maria virginarenganic. Padecitu zue Poncio Pilatoren manuaren azpian, gurucificatu zute, il zute, orzi zute. Jausi ce infernuetara, eta irurgarren egunean erresucitatu ce ilen ertetic. Igan ce ceruetara, an dago jarriric aita Jangoyco gucis podero-

[1218] onelasse] gainerako adibide guztietan *onlasse* agertzen da.

[1219] egu] forma horren adibide bakarra da, gainerako guztietan *egun* baitator adiera berean. Nafarroako leku batzuetan *egu* eta *egun* bereizten dira, 'gaurko eguna' eta gainerako egunak ezberdintzeko.

soaren escuyeco aldean, nondic etorrico baita ilen eta vicien juzgazera. Alaber, sinestacen dut Espiritu Sanduaren baitan. <7> Sinestacen dut Eliza ama sandu catholicoa, sanduen comunioa, becatuen barcacioa, araguiaren erresurrecioa eta vivice seculacoa. Amen Jesus.

### Salvea

Jangoycoac salva zaizala, erreina misericordiaren ama, vicice, dulzetasuna eta gure esperanza. Jangoycoac salva zaizala. Zuregana deyes gaude Evaren seme desterratuoc, suspiros, ayes eta negarres, negarresco valle ontan. Ea, bada, gure abogada izul izazu[1220] guregana zeure vegui misercordiasco oyec. Eta desterru onen buruan eracutsi dazaguzu zeure sabeleco fruitu Jesus bedeicatu ori. O, Clementissima! O, Piadosa! O, Dultze virgina Maria, Jangoycoaren ama sandua, otoiz eguizu guregatic mereji dezazquigun Jesu Christoren prometimentuac. Amen Jesus.

### <8> Jangoycoaren legueco mandamentuac

Jangoycoaren legueco mandamentuac dire amar. Lembecico irurac Jangoycoaren ondrarendaco eta berce zazpiac proximoaren provechuarendaco.

Lembecicoa: Jangoycoa onesicea gauza gucien gañetic.

Bigarrena: juramenturic vanoan ez eguitea.

Irurgarrena: jayac eta igandeac guardacea.

Laugarrena: aita eta ama ondracea.

Borzgarrena: ez ior ilcea.

Seygarrena: ez fornicacea, edo luxuriasco becatuan ez erortcea.

Zazpigarrena: ez[1221] ebastea.

Zorzigarrena: ez falsu testimonioric ez guezurric erratea.

Bedrazigarrena: berceren emastea ez deseacea.

Amagarrena: berceren ondasunac vide gavean ez deseacea. <9>

Amar mandamantu ebec eguiten dire bietan: Jangoycoa cervizacean eta onesicean gauza gucien gañetic eta proximo laguna gueuren burua becala. Amen Jesus.

### Eliza ama sanduaren mandamentuac

Eliza ama sanduaren mandamentuac dire borz.

Lembicicoa: igande eta jayetan meza osoa enzutea.

Bigarrena: urtean bein verere confessazea.

Irurgarrena: Bazcoa Garizumacoan comecacea.

Laugarrena: barurcea Eliza ama sanduac manacen duenean.

Borzgarrena: amarren primiciac ongui eguitea. Amen Jesus.

---

[1220] izul izazu] jat. *izulizazu* dator eta ez da erraza banaketa zuzena erabakitzen. Goi-nafarrera arkaikoko gainerako salbeetan pluraleko adizkia agertzen da; beraz, edizio honetan *izazu* jarri da. Dena den, Elizaldek ez du inoiz gehiago *izazu* erabiltzen, *zazquizu* baizik. Beraz, *itzuli zazu* banakera ere izan lezake, pluraleko komunztadura faltarekin. Edonola ere, salbea moduko otoitza izanik, ez da arraroa arkaismo moduan agertzea pluraleko forma hori.

[1221] ez] jat. *ec*. Ez dirudi *c* *ç*-ren ordez dagoenik, testuan ez baita *ç*-rik.

**Eliza ama sanduaren sacramentuac**

Elizazo sacramentuac[1222] dire zazpi.
Lembezicoa: batayoa. <10>
Bigarrena: confirmacioa.
Irurgarrena: penitencia edo confesioa.
Laugarrena: comecacioa.
Borzgarrena: oliadura.
Seygarrena: orden.
Zazpigarrena: matrimonioa.
Amen Jesus.

**Articulo fedescoac**

Articulo fedescoac dire amalaur: lembicico zazpiac dire divinidadearenac eta berze zazpiac Christo gure jaunaren humanidade sanduarenac.

**Divinidadearenac dire ebec**

Lembecicoa: sinestacea dela Jangoyco bat gucis poderosoa.
Bigarrena: sinestacea dela aita.
Irurgarrena: sinestacea dela semea.
Laugarrena: sinestacea dela Espiritu Sandua.
Borzgarrena: sinestacea dela criazalea. <11>
Seygarrena: sinistacea[1223] dela salvazalea.
Zazpigarrena: sinestacea dela glorificazalea.

Humanidade sanduarenac dire ebec

Lembecicoa: sinestacea Jesu Christo gure jauna guizon cen becala, concebitu zela Espiritu Sanduaren obras.

Bigarrena: sinestacea jaio cela Ama Virginarenganic, beti virgen gueldicen cela erdi baño len, erdicean eta erdias gueros.

Irurgarrena: sinestacea pasatu zuela pasio eta eriozea gure salvaceagatic.

Laugarrena: sinestacea jausi cela ifernuetara eta atra cituela aren beyra ceuden arima sandu ayec.

Borzgarrena: sinestacea erresucitatu zela irurgarren egunean ilen ertetic.

Seygarrena: sinestacea igan cela ceruetara eta dagola jarriric aita Jangoycoaren escuieco aldean. <12>

Zazpigarrena: sinestacea etorrico dela vicien eta ilen juzgazera, onei emateco gloria, cergatic goardatu citusten aren mandamentu sanduac, eta gaistoei ifernua, cergatic ecitusten goardatu. Amen Jesus.

**Obra misericordiascoac**

Obra misericordiascoac dire amalaur: zazpi corporaleac eta zazpi espiritualeac.

---

1222 sacramentuac] jat. *sacrameutuac*, <n> iraulita.
1223 sinistacea] aldaera hau behin bakarrik agertzen da Elizalderen dotrinan.

**Corporaleac dire ebec**

Lembicicoa: eriac visitacea.
Bigarrena: jatera ematea gose denari.
Irurgarrena: edatera ematea egarri denari.
Laugarrena: billusiric dagona vesticea.
Borzgarrena: ostatu ematea peregrinoari.
Seygarrena: cautivoac erredimicea.
Zazpigarrena: ilen orstea.

<13> **Zazpi espiritualeak dire ebec.**

Lembicicoa: eracustea estaquienari.
Bigarrena: bear duenari conseju ematea.
Irurgarrena: uts eguinic doaiena corregicea.
Laugarrena: injurien barcacea.
Borzgarrena: triste dagona consolacea.
Seygarrena: eramatea pacienciarequi lagunaren flaquezac.
Zazpigarrena: otoiz eguitea vicien eta ilengatic. Amen Jesus.

**Becatu capitaleac, deizen baitire mortaleac.**

Becatu capitaleac dire zazpi.
Lembicicoa: sobervia, buruan.
Bigarrena: embidia, veguietan.
Irurgarrena: gula, agoan.
Laugarrena: ira, viocean.
Borzgarrena: avaricia, escuetan.
Seygarrena: luxuria, guerruncean. <14>
Zazpigarrena: pereza, oñetan.

**Zazpi vicio eben contra dire zazpi virtute**

Soberviaren contra humildadea.
Embidiaren contra charidadea.
Gularen contra templanza.
Iraren contra paciencia.
Abariciaren contra liberalidadea.
Lujuriaren contra, castidadea.
Perezaren contra diligencia.

**Animaren etsayac dire irur**

Lembicicoa: mundua.
Bigarrena: demonioa.
Irurgarrena: araguia.

**Iduqui bear ditugun virtuteac dire zazpi**

Irur theologaleac eta laur cardinaleac.
Theologaleac dire ebec:
Lembicicoa: fedea.

Bigarrena: esperanza.
Irurgarrena: charidadea.

**Laur cardinaleac dire ebec:**
Lembicicoa: prudencia.
Bigarrena: justicia. <15>
Irugarrena: fortaleza.
Laugarrena: templanza.

**Arimaren potenciac dire iru**
Lembicicoa: memoria.
Bigarrena: entendimentua.
Irurgarrena: vorondatea.

**Sentido corporaleak dire ebec**
Lembicicoa: icustea.
Bigarrena: adizea.
Irurgarrena: usmacea.
Laugarrena: gustazea.
Borzgarrena: palpacea edo uquicea.

**Espiritu Sanduaren donac dire zazpi**
Lembicicoa: jaquinduria.
Bigarrena: entendamentua.
Irurgarrena: consejua.
Laugarrena: fortaleza.
Borzgarrena: ciencia.
Seygarrena: piedadea.
Zazpigarrena: Jangoycoaren beldurra.

**Espiritu Sanduaren frutuac dire amabi**
Lembicicoa: caridadea.
Bigarrena: gozo espiritualea. <16>
Irurgarrena: baquea.
Laugarrena: paciencia.
Borzgarrena: magnanimidadea.
Seygarrena: ontasuna.
Zazpigarrena: benignidadea.
Zorzigarrena: mansedumbrea.
Bedrazigarrena: fedea.
Amargarrena: modestia.
Amecagarrena: continencia.
Amabigarrena: castidadea.

Bienaventuranzac dire zorzi:
Bienaventuratuac dire espiritu pobre duten ayec, cergatic ayena da cerua.
Bienaventuratuac dire mansoac, cergatic ayec izanen dire lurraren jabe.

Bienaventuratuac dire negar eguiten dutenac, cergatic izanen dire consolatuac.

Bienaventuratuac dire justician[1224] gose eta egarri direnac, cergatic aspertuco dire.

Bienaventuratuac dire misericordiosoac, cergatic erdechico dute misericordia. <17>

Bienaventuratuac dire vioz garvia dutenac, cergatic icusico dute Jangoycoa.

Bienaventuratuac dire pacificoac, cergatic erranen diote Jangoycoaren semeac direla.

Bienaventuratuac dire, justiciarengatic padecicen dutenac, cergatic ayena da ceruco erreynua.

**Becatu venialea barcacen da bedraci gauza ebetatic edoceinequi**

Meza enzuteas devociorequi.
Ongui comecacearequi.
Jangoycoaren itza adicearequi.
Obispoaren bedeicioarequi.
Aita gurea erratearequi.
Confessio generalea erratearequi.
Ur bedeicatu arcearequi.
Bularretan golpe ematearequi.
Au guciau devocio eta urriquimentuarequi.

<18> **Guizonaren[1225] azquen finac dire laur**

Lembicicoa: eriocea.
Bigarrena: juicioa.
Irurgarrena: infernua.
Laugarrena: gloria edo cerua.

**Confessio generalea**

Ni, becatorea, confessacen naiz Jangoyco omnipotenteari, andre dona Maria virginari, jaun done Miguel ainguiruari, jaun done Joaniz Bautistari, San Pedro eta San Paulo apostolu bienaventuratueri, ceruan diren sandu eta sanda guciei eta neure aita confessore orri aniz becatu eguin dudala pensamentus, itces eta obras, neure culpas, neure[1226] culpa andias. Argatic, otoiz eguiten diot andre dona Maria virginari, jaun done Miguel ainguiruari, jaun done Ionaiz Bautistari, San Pedro eta San Paulo apostolu bienaventuratueri, ceruan diren sandu guciey eta neure aita confessore orri, otoiz <19> eguin dezaten enegatic gure Jangoycoari. Amen Jesus.

---

[1224] justician] jatorrizkoan hala dator, baina genitiboa da, hau da, *justiciaren gose*.

[1225] Guizonaren] Aurreko orrialdean den apeuak *irur-* dio, ez *guizon-*; apeuaren hutsa bide da, ez baita orrialderik falta.

[1226] neure] jat. *neur*.

**Contricioa**

Jesu Christo neure jauna, Jangoyco eta guizon verdaderoa, neure criadorea eta erredentorea, cergatic zaren Jangoycoa eta cergatic onesicen zaitudan gauza gucien gañetic, damu dut neure bioz gucias orren ofendituas. Eta proponicen dut confessacea eta firmequiro beyñere becaturic ez eguiteco.

**Edo onlasse:**

Jauna, cergatic zaren Jangoycoa eta cergatic onesicen zaitudan gauza gucien gañetic, damu dut zu ofendituas eta proposito firmea eguiten dut, confessaceco eta emendazeco.

**Eta ara atricioa**

Jesu Christo neure jauna, Jangoyco eta guizon verdaderoa, neure criadorea eta erredentorea, damu dut zu ofendituas, <20> cergatic becatua gauza itsusia den edo cergatic castigatuco nauzun mundu ontan edo vercean. Proposito firmea eguiten dut confesaceco eta emendaceco.

**Edo onlasse:**

Jauna, damu dut zu ofendituas, cergatic becatua gauza itsusia den edo cergatic ifernuaren veldur dudan. Proposito firmea eguiten dut confessaceco eta emendaceco.

**Aurrendaco advertencia bat**

Veren artean passacen ditustenean preguntac, errespondazen duenac erran ber du «Bay, anaya» edo «Ez, anaya». Eta apezac edo maistruac edo aitac galdeiten diotenean, «Bay, jauna» edo «Ez, jauna». Eta erraten diotenean erran dezala Ave Maria edo berce edocein oracio, estu cer erran gucia, baicic bi itz eta Amen Jesus.

<21> **Capitulo lembicicoa**

**Christioaren izena eta señalacea nola dá**

Galdeiten dut. Aurra, cembat Jangoyco dire?

Erresponda zazu. Bat solamente.

Gal. Eta nola da zure izena?

Err. N.

Gal. Iduqui bear duzu devocio andia ceure sandu orri?

Err Bai, jauna.

Gal. Eta christioa zará?

Err. Bay, Christo gure jaunaren gracias.

Gal. Cer nai du erran ‘christioa’?

Err. Christoren fedea daucana professaturic batayoan.

Gal. Bada, nor dá Christo?

Err. Jangoyco eta guizon verdaderoa.

Gal. Nola da Jangoyco?

Err. Cergatic Jangoyco viciaren seme naturalea den.

Gal. Eta nola da guizon?

Err. Cergatic, alaber, Ama Virginaren semea den.
<22> Gal. Christoc bi naturaleza ditu?
Err. Bay, jauna. Divinoa eta humanoa, baña solo persona bat.
Gal. Guizon eguin zen baño len nola deicen ce?
Err. Jangoycoaren seme eternoa edo trinitateco bigarren persona.
Gal. Eta guizon eguinas gueros?
Err. Deicen da Christo.
Gal. Cergatic deicen da Christo?
Err. Cergatic ungituric eta gracias beteric dagon gucien gañetic.
Gal. Christo au da Mesias verdaderoa?
Err. Bay, jauna, legueac eta profetec prometitu zutena.
Gal. Cein cire aren oficio principalac?
Err. Salvadore eta maistruarenac.
Gal. Cer dotrina eracutsi zue?
Err. Dotrina christiana.
Gal. Cembat parte ditu dotrina christianac?
Err. Laur principalac.
<23> Gal. Cein dire oyec?
Err. Credo eta mandamentuac, oracioa eta sacramentuac.
Gal. Eta cein da christioaren señalea?
Err. Guruce Sandua.
Gal. Cergatic?
Err. Cergatic baita Christo crucificatuaren figura, non erredimitu guinduzan.
Gal. Nola eguiten da gurucea?
Err. Ceñacean eta santiguacean.
Gal. Cer da ceñacea?
Err. Irur guruce eguitea, copetan, agoan eta bularretan.
Gal. Cerequi eguiten da gurucea?
Err. Escuyeco beaza lembicico eriarequi guruzaturic.
Gal. Icusagun nola?
Err. Guruce Sanduaren señaleagatic. Gure etsayetatic libera gaizazu, gure jaun eta Jangoycoa.
Gal. Certaco eguiten da copetan?
Err. Jangoycoac libera gayzan pensamentu gaistoetatic.
<24> Gal. Certaco agoan?
Err. Jangoycoac libera gaizan itz gaistoetatic.
Gal. Cergatic bularretan?
Err. Libera gaizan obra eta deseo gaistoetatic.
Gal. Eta cer da santigoacea?
Err. Guruce andi bat eguitea copetatic bularretaraño, soin batetic[1227] berceraño.
Gal. Icusagun nola?

[1227] batetic] jat. *bateti* irakurtzen da, baina posible da azken letra ezabaturik egotea.

Err. Aitaren eta Semearen eta Espiritu Sanduaren izenean. Amen Jesus.

Gal. Noiz eguin bear da gurucea?

Err. Obra gucien asicean eta aurquizen garenean peligro, necessidade edo tentacioan.

Gal. Cergatic ainberce aldis?

Err. Cergatic dembora gucietan gure etsaiec perseguicen gaitusten.

Gal. Cer etsai[1228] dire oyec?

Err. Mundua, demonioa eta araguia.

Gal. Eta guruceac badu virtuteric <25> ayen contra?

Err. Bay, cergatic Christoc garaitu cituen gurucean.

**Capitulo bigarrena**
**Christioaren obligacioaren gañean**

Gal. Cein da christioaren lembicico obligacioa?

Err. Vilacea azquen fina, ceinetaco criatu baizue.

Gal. Cer finetaco criatu zue?

Err. Jangoycoa cervizazeco eta gozazeco.

Gal. Cein obrequi cervizazen da Jangoycoa?

Err. Fedearen, esperanzaren eta charidadearen obrequi.

Gal. Cer gauza da fedea?

Err. Icusi bague sinestacea.

Gal. Cer gauza da esperanza?

Err. Echidetea edo esperazea.

<26> Gal. Cer gauza da charidadea?

Err. Jangoycoa onesicea.

Gal. Fedeac cer eracusten digu?

Err. Sinesta dezagula Jangoycoaren baitan, cergatic den eguia.

Gal. Esperanzac cer eracusten digu?

Err. Espera dezagula aren baitan, cergatic den podore infinitoa.

Gal. Eta charidadeac cer dio?

Err. Onesi dezagula Jangoycoa gauza gucien gañetic, ondasun andiena becala.

Gal. Nola jaquinen dugu ongui sinestazen?

Err. Ongui entendazen badugu credoa eta articuloac.

Gal. Nola jaquinen dugu esperazen eta escazen?

Err. Ongui entendaturic pater nosterra edo aita gurea.

<27> Gal. Nola jaquinen dugu obrazen?

Err. Ongui entendaturic mandamentuac eta sacramentuac.

Gal. Obligacio andia dugu jaquitera eta entendazera au guciau?

Err. Bai, cergatic ezin cumpli dezaquegu entendazen ezpadugu.

[1228] etsai] jat. *etsaiec* dator; itxura guztien arabera, hutsa.

**Capitulo irurgarrena**
**Credoaren gañean**

Gal. Erran zazu Credoa.
Err. Sinestacen dut aita Jangoyco,[1229] Amen Jesus.
Gal. Cer erran dugu oray?
Err. Credoa.
Gal. Norc erran zue Credoa.
Err. Apostoloec.
Gal. Certaco?
Err. Gu informaceco fedean.
Gal. Eta guc certaco erraten dugu?
<28> Err. Fedea confessaceco eta artan gueyago confirmaceco.
Gal. Fedeac eracusten duena cein ciertoa da?
Err. Ezin gueyagocoa, cergatic den Jangoycoaren iza.
Gal. Jangoycoaren iza falta daiteque?
Err. Ez, cergatic ezin engaña daiteque eta gu ezin engaña gaizaque.
Gal. Nondic daquigu Jangoycoac erran dituela?
Err. Eliza ama sanduarenganic, Espiritu Sanduac governaturic.
Gal. Cein bearra da ayen sinestacea?[1230]
Err. Ain bearra, ezi ayen fedea bague, ezin ior salba daique.
Gal. Eta fedearequin solamente salbatuco da?
Err. Ez, ezpadu charidadea eta obra onac.
<29> Gal. Credoa eta articuloac gucia da bat?
Err. Bay, jauna.

**Capitulo laurgarrena**
**Articuloaren gañean**

Gal. Erranzquizu articulo fedescoac.
Err. Articulo fedescoac dire amalaur. Amen Jesus.
Gal. Cer dire articulo fedescoac?
Err. Fedearen misterio principalenac.
Gal. Erran duzu lembicicoa dela sinestacea Jangoycoaren baytan.
Gal. Nor da Jangoycoa?
Err. Jaun bat infinitamente ona, sabioa, sandua, poderosoa, gauza gucien principio eta fina.
Gal. Eta berac badu principioric edo finic?
Err. Ez, jauna, beti izan ze eta <30> izanen da.
Gal. Bada, norc eguin zue Jangoyco au?
Err. Iorc ez, baicic bera izan ze beti.
Gal. Bada, nondic etorri ce?
Err. Iondic ez, beti cego lecu gucietan.
Gal. Bada cerua eta mundua eguin baño len, eze lecuric, orduan non cego Jangoycoa?

1229 Jangoyco] postposizioa falta zaiola dirudi.
1230 sinestacea] jat. *sinesnestacea*; duplografia.

Err. Bere baitan, bere eternidadean.
Gal. Jangoyco au cembat persona da?
Err. Irur igualac gauza gucietan.
Gal. Nor dire?
Err. Aita eta Semea eta Espiritu Sandua.
Gal. Misterio oni nola deicen zayo?
Err. Trinitate Sandua.
Gal. Aita Jangoycoa da?
Err. Bay, jauna.
Gal. Semea Jangoycoa da?
<31> Err. Bay, jauna.
Gal. Espiritu Sandua Jangoycoa da?
Err. Bay, jauna.
Gal. Irur Jangoyco dire?
Err. Ez, jauna, baicic irur persona diferenteac eta Jangoyco bat.
Gal. Ara berris: aita Jangoycoa da?
Err. Bay, jauna.
Gal. Orra Jangoyco bat.
Err. Bay, jauna.
Gal. Semea Jangoycoa da?
Err. Bay, jauna.
Gal. Orra Jangoyco bi.
Err. Ez, jauna, estire bi.
Gal. Espiritu Sandua Jangoycoa da?
Err. Jangoycoa, bay, jauna.
Gal. Orra irur Jangoyco?
Err. Ez, jauna, baicic irur persona diferenteac eta Jangoyco bat.
Gal. Bat dela irur, eta alere irurac dire bat. Nola dateque?
<32> Err. Onlasse: sagar batean daude irur gauza: sagarraren urrina, sagarraren colorea eta sagarraren saborea, eta alare sagar bat baicic ez.

Alasse, Aita Jangoyco, Semea Jangoyco, Espiritu Sandua Jangoyco, eta alare Jangoyco bat baicic ez.

Gal. Persona oyec nola dire diferenteac?

Err. Aita beti da solamente aita, Semea beti da solamente seme, Espiritu Sandua beti da solamente Espiritu Sandua.

Gal. Erran zazu berce modu bates.

Err. Aita esta seme eta ez Espiritu Sandu, baicic aita. Semea esta aita eta ez Espiritu Sandu, baicic seme, Espiritu Sandua esta aita <33> eta ez seme, baicic Espiritu Sandu.

Gal. Iruretatic cein da lenago, andiago, zarrago, obeago edo daquiena gueiago?

Err. Irurac dire igualac gauza gucietan eta golpe bates.
Gal. Bada, aitac estu engendracen semea?
Err. Bay, jauna.
Gal. Bada, nola da engendraze ori?

Err. Onlasse: nic isspiluan eguiten dudan becala neure iduria. Aita veiraturic bere entendamentuan, engendratu zue seme galampat, ain poderosoa, ona, sabioa, sandua eta ain Jangoycoa, nola Aita.

Gal. Eta nola da Espiritu Sandua?

Err. Onlasse: Aitac eta Semeac, elcar icusiric <34> ain galantac, onetsi zute elcar. Eta bién amore ura da Espiritu Sandua.

Gal. Ortaco lenago edo zarrago da Aita?

Err. Ez, jauna, baicic irurac dire golpe bates eta irurac batean.

Gal. Bada, nola dateque?

Err. Onlasse: Iguzquia, argia eta beroa, irurac dire golpe bates; eta, alare, iguzquitic atracen da arguia, eta iguzquitic eta arguitic beroa. Aita, Semea eta Espiritu Sandua, irurac dire golpe bates, eta alare Aitac engendracen du Semea eta Aitac eta Semeac espiracen dute Espiritu Sandua.

Gal. Jangoycoac badu corpucic guc becala?

Err. Jangoyco den becala ez, baicic da espiritu puroa.

<35> Gal. Jangoycoa nola da gucis poderosoa?

Err. Cergatic bere vorondates eguiten duen nai duen gucia.

Gal. Jangoycoa nola da criazalea?

Err. Cergatic deusetic eguin cituen gauza guciac.

Gal. Eta nola da salbazalea?

Err. Cergatic ematen duen gracia eta becatuen barcacioa.

Gal. Cergatic ematen digu vere gracia?

Err. Bere ondasun andiagatic eta Christoren meregimentuengatic.

Gal. Cer da gracia?

Err. Izate divino bat eguiten gaituena Jangoycoaren seme eta gloriaren heredero.

Gal. Gracia orrequi cer ondasun dugu?

Err. Podorea eta naya <36> obra onequi satisfacio eta meregimentu eguiteco.

Gal. Gracia nola erdechicen eta aumentacen da?

Err. Oracioequi, sacramentuequi eta virtutequi.

Gal. Jangoycoa nola da glorificazalea?

Err. Cergatic ematen dion gloria aren gracian perseveracen denari.

Gal. Eta purgatoriora doacenac nor dire?

Err. Gracian ilzen direnac baña zor dutenac pena bat.

**Humanidade sanduaren articuloac**

Gal. Trinitate sanduaren cein persona eguin ce guizon?

Err. Bigarrena, Jangoycoaren seme eternoa.

Gal. Eternoa izanic, nola concebitu <37> ze verriro?

Err. Artu zue gorpuz eta arima racionalea milagrosoqui.

Gal. Aren ama virgina izanic, nola jaio ce?

Err. Milagrosamente, concebitu zuen becala, edo milagrosoqui.

Gal. Imin zazu exemplo bat.

Err. Vidrioa autsi bague, iguzquia sarcen eta atracen da aposentuan. Alasse, Ama Virgina vidrio cristalino eta Christo iguzqui verdadero. Orra nola concebitu eta jaio cen.

Gal. Eta guero ama izan ze beti virgina?

Err. Bay, jauna, perpetuamente.

Gal. Jangoycoa certaco eguin ze guizon?

Err. Guizonarengatic ilzeco eta exemplo ematecó.

Gal. Cergatic nai zue il?

<38> Err. Gu becatutic erredimiceco eta infernutic libraceco.

Gal. Gu nola sartu guina becatuan?

Err. Gure lembicico aita Adanec eguin zue becatua, eta aren baitan guc ere.

Gal. Bada, Jangoycoac il bague ezeuca berce modoric?

Err. Baceuca, baña au conveni cizaigu gueiago.

Gal. Jangoycoa inmortalea izanic, nola il ze?

Err. Cergatic Jangoyco izatearequi batean guizon mortalea zen.

Gal. Cergatic nai zue il gurucean?

Err. Cergatic erioze afrentosoa zen, eta argatic gloriosoago.

Gal. Erran duzu jauchi zela ifernuetara, cer dire ifernuac? <39>

Err. Laur butzu edo lecu cerura joaten estiren arimendaco.

Gal. Cein dire oyec?

Err. Lembicicoa, dañatuena, becatu mortalean ilic.

Gal. Cein da bigarrena?

Err. Batayatu bague ilzen diren aurrena.

Gal. Eta irugarrena?

Err. Justoen purgatorioa, non daucaten cer purgatu.

Gal. Eta laugarrena cein da?

Err. Lenagoco justoena, Christoren beguira baizeude.

Gal. Ifernu ebetatic ceynetara jauchi ce Christo?

Err. Azqueneco ontara, cein baita lenago justoena.

Gal. Nola jaichi ze?

Err. Arima divinidadearequi unituric edo juntaturic.

Gal. Eta bere gorpuza nola guelditu ze?

Err. Gurucean, unituric edo juntaturic divinidade berarequi.

<40> Gal. Erran zazu comparacio bat.

Err. Bada, contu eguin zazu ezpata dela arima, maguia edo bayna gorpuza eta guizona divinidadea.

Gal. Eta cer dugu orrequi?

Err. Escuyac atracen du ezpata, orra arima apartaturic gorpucetic, baña ez arima eta ez gorpuza apartace esta divinidadetic.

Gal. Nola erresucitatu ze?

Err. Arima eta gorpuz gloriosoac juntaturic len becala.

Gal. Nola igan ze ceruetara?

Err. Inmortalea vere virtute propioas.

Gal. Cer da jarriric dagola aitaren escuyeco aldean?

Err. Jangoyco becala igual gloria duela aitarequi, eta guizon becala berce guciec baño gueyago.

Gal. Araguia nola erresucitatuco da?

Err. Gure gorpuz eta arima ebec <41> beroc, juntaturic eternamente vicizeco ceruan edo infernuan.

Gal. Eta orduan guc iraunen dugu beti seculaco?
Err. Bay, jauna, Jangoycoac becala.
Gal. Cer nai du erran «Sinestacen dut sanduen comunioan»?
Err. Guciec dugula parte gucien ondasun edo obra gucietan, gorpuz baten miembroac bezala.

**Capitulo borzgarrena**
**Pater noster edo aita gurearen gañean**

Gal. Erran zazu pater nosterra.
Err. Aita gurea, ceruetan zaudena. Amen Jesus.
Gal. Norc erran zue pater nosterra?
Err. Christo berac, apostoloec escaturic.
<42> Gal. Certaco erran zue?
Err. Guri eracusteco oracio eguiten.
Gal. Cer da oracio eguitea?
Err. Arima gorazea Jangoycoarengana escaceco merchedeac.
Gal. Cergatic eracusi zigu deycera «Aita»?
Err. Guc esca dezogungatic semearen amorearequin.
Gal. Nola gara aren seme?
Err. Cergatic berac eman cigun naturalearen eta graciaren izatea.
Gal. Cergatic estugu erraten «Aita enea», baicic «Gurea»?
Err. Guciec escaceco guciendaco, anaya onac becala.
Gal. Oracio ontan norequi minzazen gara?
Err. Gure aita Jangoycoarequi.
Gal. Non dago gure aita Jangoycoa?
<43> Err. Lecu gucietan, bere essencias, presencias eta potencias.
Gal. Cer nay du erran essencias, presencias eta potencias?
Err. Bere naturalezas, eta dagola presente bere podorearequi.
Gal. Bada, cergatic erraten dugu ceruetan dagola?
Err. Cergatic ceruetan manifestacen den gueyago.
Gal. Cembat peticio ditu pater nosterrac?
Err. Zazpi, galanqui disponituric.
Gal. Nola daude disponituric?
Err. Lembicico irurac Jangoycoaren eta berce laurac guretaco.
Gal. Cer escacen dugu peticioetan?
Err. Ondasun gucien abundancia eta gaiz gucien erremedioa.
Gal. Cer escacen da itz ebetan: <44> «Santifica vedi zure izena»?
Err. Erreverencia andiarequi lauda dezagula.
Gal. Cer escacen da itz ontan: «Etorri vedi zure erreynua».
Err. Gueldi dadila gure baitan aren gracia eta, guero, digula gloria.
Gal. Cer nay du erran: «Eguin vedi zure vorondatea»?
Err. Guizonec eguin dezatela pronto, ainguiruec becala.
Gal. Cer escacen da: «Iguzu egun gure egunorosco oguia»?
Err. Arimaren eta gorpuzarendaco bear den gucia.
Gal. Cergatic escacen da egungo solamente?
Err. Gu obligazeco biar ere escacera egun becala.

Gal. Cer da: «Barca dazquiguzu gueuren zorrac»?

Err. Escazen da culpa gucien eta ayen penaren barcacioa.

<45> Gal. Cergatic erraten da: «Guc barcacen dugun becala gu zor gaitustenei»?

Err. Cergatic lagunari barcacen estionari Jangoycoac estio barcatuco.

Gal. Cer escacen da: «Ezcayzazula utzi tentacioan erorcera»?

Err. Guarda gaizala ayeri consentimentu ematetic.

Gal. Cein gaizetatic nay dugu libratu erraten dugunean: «Libera gaizazu»?

Err. Demonio, ifernu eta caso desastratu ayetatic.

**Capitulo seigarrena**
**Berce oracio bazuc**

Gal. Bada, berce oracioric pater nosterras landa?

Err. Bay, escritura, Eliza eta sanduenac.

Gal. Cein da oracioen andiena?

<46> Err. Pater nosterra, cein baita gucien erregla.

Gal. Cergatic da bercen erregla?

Err. Cergatic Christoc erran zuen eta daucan bear den gucia.

Gal. Oracio onaren condicioac cein dire?

Err. Piedadea, confianza, humildadea eta perseverancia.

Gal. Eguin bear dugu oracio ainguiruei eta sanduey?

Err. Bay, gure medianeroey becala.

Gal. Cer dire ainguiruac?

Err. Jangoycoa alabazen duten espiritu soberanoac.

Gal. Cer eguiten dute gueiago?

Err. Guardatu guizonac eta ayen mandatuac eguin Jangoycoari.

Gal. Ama Virginari cer oracio eguiten diozu?

Err. Ordinarioqui ave Maria eta salvea.

<47> **Capitulo zazpigarrena**
**Ave Maria eta salvearen gañean**

Gal. Erran zazu ave Maria.

Err. Jangoycoac salba zaizala, Maria, gracias betea. Amen Jesus.

Gal. Norc erran zue ave Maria?

Err. Aynguiru San Gabriel eta Santa Isabelec erran zute erdia, eta Elizac berze erdia.

Gal. Erran zazu salbea?

Err. Jangoycoac salba zaizala, erreyna. Amen Jesus.

Gal. Eta salbea nondic icasi dugu?

Err. Elizaren costumbretic.

Gal. Oracio ebetan norequi minzazen gara?

Err. Ama Virginarequi.

Gal. Nor da Ama Virgina?

Err. Andre andi bat virtutes <48> eta gracias beteric, eta Jangoycoaren Ama.

Gal. Non dago andre andi ori?

Err. Ceruan gorpuz eta ariman.
Gal. Bada, cer da temploan edo elizan dagona?
Err. Aren imagina, figura edo erretratua.
Gal. Bada, certaco dago?
Err. Gu Ama Virginas oroizeco eta eguiteco erreverencia.
Gal. Cer erreberencia eguin bear da imaginey?
Err. Sanduey becala.
Gal. Sanduey cer oracio eyten dugu?
Err. Letaniac edo procesioac eta pater noster eta ave Maria.
Gal. Bada, oracio ebec estitugu eyten Jangoycoari eta bere amari?
Err. Bay, baña sanduen medios escazen da Jangoicoari <49> eta sanduey ere bay.

**Capitulo zorcigarrena,**
**Mandamentuen gañean**

Gal. Erranzquizu mandamentuac.
Err. Jangoycoaren legueco mandamentuac dire amar. Amen Jesus.

**Lembicicoaren gañean**

Gal. Certara obligazen gaytu Jangoycoaren amoreac?
Err. Bera solamente bacarric onetsicera Jangoyco becala, fede, esperantza eta charidadearequi.
Gal. Nola bear dugu adoratu?
Err. Gorpuz eta arimarequi.
Gal. Bada, bera espiritu izanic, esta asqui arimarequi?
Err. Ez, cergatic arrenganic dugu gorpuza re.
Gal. Cer da Jangoycoa onesicea gauza gucien gañetic?
<50> Err. Nayago galdu gauza guciac, Jangoycoa ofenditu baño.
Gal. Norc eguiten du becatu fedearen contra?
Err. Sinestazen duenac supersticioetan eta gauza necesarioac ucacen, dudacen edo ignoracen dituenac.
Gal. Norc eguiten du becatu esperanzaren contra?
Err. Jangoycoaren misericordian desconfiacen duenac edo artan presumicen duenac banoan.
Gal. Eta norc charidadearen contra?
Err. Jangoycoaren beneficioey desconocitu dena, eta aren vorondate eta legueari desobedienteac.

**Bigarren mandamentuaren gañean**

Gal. Norc eguiten du juramentu banoan?
<51> Err. Juramentu eguiten duenac eguia bague, justicia edo necesidade bague.
Gal. Eguia vague juramentu eguiten duenac, cer becatu eguiten du?
Err. Mortalea, adbertizen badu edo balin badaqui guezurra diola.
Gal. Dudan juramentu eguiten duenac becatu mortalea eguiten du?
Err. Bay, cergatic daucan peligro guezurrarequi juramentu eguiteco.

Gal. Norc eguiten du juramentu justicia vague?

Err. Juramentu eguiten duenac gaistaqueria eguin bear duela.

Gal. Eta orla juramentu eguiten duenac, cer becatu eguiten du?

Err. Gueiago edo gutiago, mortale edo veniale, nola den gauza cergatic eguiten duen juramentua.

<52> Gal. Cergatic ofendicen da ain aniz Jangoycoa bi juramentu ebetan?

Err. Cergatic atrevimentu andia den Jangoycoa ecarcea testigo gauza falsu eta gaistoendaco.

Gal. Juramentu eguiten duenac gaistaqueria eyteco, cer eynen du?

Err. Damutu eta ez cumplitu.

Gal. Necesidade vague juramentu eguiten duenac, cer becatu du?

Err. Gutienean venialea, erreberencia gutiagatic.

Gal. Eta, becatu da criaturen gañean orla juramentu eguitea?

Err. Bay, cergatic criaturetan juracen da criadorea.

Gal. Bada, becaturic ez eguiteco nola erranen dugu?

Err. Bay edo ez, Christoc eracusten duen becala.

Gal. Voto edo promesan, noiz <53> da becatu ez cumplitcea edo luzacea?

Err. Arracioric estenean confesore edo letratuaren juycioan.

**Irugarren mandamentuaren gañean**

Gal. Norc goardacen edo santificatcen ditu jayac?[1231]

Err. Meza osoa enzuten duenac eta obra onetan emplezacen denac.

Gal. Gauza gutietan[1232] edo bear direnean trabajatcea[1233] becatu da?

Err. Ez, baña, alare, dudan galdeguin daquienari.

Gal. Mandamentu onen contra berce cembaytec eguiten du becatu?

Err. Bay, Eliza eta Elizaco escomecacioa despreciacen duenac.

**Laugarren mandamentuaren gañean**

Gal. Norc ondracen ditu <54> ayta eta ama?

Err. Obedicen, socorricen eta reverenciacen dituenac.

Gal. Berceric nor da ayta eta ama naturales landara?

Err. Zarragoac,[1234] gueyago daquitenac eta governacen duenac.

Gal. Cer eguin bear dute ayta naturalec bere semeequi?

Err. Sustentatu, dotrina eracusi eta ebec nai duten estadoa eman.

Gal. Ezconduec nola eguin bear dute vere andrequi?

Err. Amores eta cordurarequi, Christoc vere Elizarequi becala.

Gal. Eta andreec beren senarrequi nola?

Err. Jangoycoaren semeequi becala.

Gal. Eta mutilac nausiequi?

Err. Jangoycoa cerbizazen den becala nausietan.

---

[1231] jayac] jat. *jacay*.

[1232] gutietan] Pagolak *gucietan* zuzentzen du. Dena den, guk horrela utzi dugu zalantza dugulako zuzendu behar ote den.

[1233] trabajatcea] jat. *traba,atcea*.

[1234] Zarragoac] jat. *zarrogoac*.

<55> **Borzgarrena mandamentuaren gañean**

Gal. Cer debecacen du ez ilceas landara?

Err. Ez iori gaiz eguitea obras, itces edo deseos.

Gal. Norc eguiten du becatu mandamentu onen contra?

Err. Meachacen, ericen, injuriacen duenac edo barcacen estionac bere enemigoari.

Gal. Ontas landara, bada berce moduric lagunaren ilceco?

Err. Bay, escandaloarequi eta laguncen estenean choil necesitatuari.

**Seygarren mandamentuaren gañean**

Gal. Seygarren mandamentua norc goardacen du ongui?

Err. Pensamentus, itces eta <56> obras casto denac.

Gal. Pensamentu gaistoetan eguiten du becatu bereganic egoci nai dituenac?

Err. Ez, eta aniz meregicen du orrequi ocasioac quencen baditu.

Gal. Bada, nor da pensamentu gaistoetan becatu eguiten duena?

Err. Cumplitu nai dituena edo bere vorondates ayetan deleitacen dena.

Gal. Ezconduey cer manacen da matrimonioaren gañean?

Err. Estezatela falta errecatoari eta prometitu zuten fedeari.

Gal. Cerc lagunduco digu casto izateco?

Err. Oracioec, sacramentuec, ocupacioac eta lagun onec.

Gal. Eta norc dañazen digu?

Err. Destemplanzac, vistac eta conversacio ocasionatuac.

<57> **Zazpigarren mandamentuaren gañean**

Gal. Norc cumplicen du mandamentu au?

Err. Arcen, iduquicen edo nay estutenac bercearena, jabearen vorondatearen contra.

Gal. Eta norc austen du?

Err. Berceari, edocein modus dañu injusto eguiten dionac edo aren causas berce batec eguiten badu.

Gal. Eta ebatsi edo dañu eguin duenari, asqui da confessacea?

Err. Ez ezpadu pagacen ebatsi duena edo zor duena edo al duen partea.

Gal. Eta ezin dezaquenac, cer eguinen du?

Err. Procuratu bere aldetic al duen becala.

<58> **Zorzigarren mandamentuaren gañean**

Gal. Norc cumplicen du zorzigarren mandamentua?

Err. Berceren gayzac ligeroqui juzgacen, erraten edo adicen estituenac, fin edo intencio ona bague.

Gal. Eta norc austen du?

Err. Infamacen duenac justicia bague, secretoa jaquinarasten duenac eta guezurra erraten duenac.

Gal. Fin onarequi guezurra erran dayque becaturic eguin bague?

Err. Ez, beiñ ere. Baña eguia issil daiteque disimuloarequi.

**Bedraci eta amargarren mandamentuen gañean**

Gal. Mandamentu ebec bioc cer debecatzen dute?

Err. Desonestidadearen eta haciendaren codiciac.

<59> Gal. Da becatu deseacea berceac baño gueyago iduquicea vide ones?

Err. Ez. Solo debecacen dire codicia injustoac eta desordenatuac.

Gal. Cergatic debecacen dire codicia ebec bioc mandamentu particularearequi?

Err. Cergatic diren choil importunoac eta peligrosoac.

**Capitulo bedracigarrena**
**Berce mandamentu bazuc**

Gal. Gure legue naturalearen mandamentuac cer dire?

Err. Nay edo ez, proximoarendaco, neuretaco nay dudana edo nay estudana.

Gal. Bada, berce mandamenturic cer jaquin?

Err. Bay, oficio particulare[1235] eta estadoenac.

<60> Gal. Eta obec[1236] norc jaquin bear ditu?

Err. Tocacen zaizquioteney.

Gal. Eta ignorante dagonac eztu escusaric?

Err. Ez bere oficioco gauza comunetan

Gal. Cerequi goardatuco dire mandamentuac?

Err. Oracio, sacramentu, pedricu, liburu devoto eta lagun onarequi.

Gal. Eta cerc dañacen digu?

Err. Ocasio eta costumbre gaistoec, debocio guti eta confianza sobratuac.

**Capitulo amargarrena**
**Elizaco mandamentuen gañean**

Gal. Erran zazquizu Elizaren mandamentuac.

Err. Elizaco mandamentu sanduac dire borz. Amen Jesus.

<61> Gal. Certaco dire mandamentu ebec?

Err. Obequi esplicaceco eta goardaceco Jangoycoaren leguecoac.

Gal. Cer da Eliza?

Err. Christio[1237] fiel gucien junta Christoc governaturic eta aren lecuan Ayta Sanduac.

Gal Nor da Aita Sandua?

Err. Erromaco obispoa, nori obeditu bear diogu.

**Lembicico mandamentuaren gañean**

Gal. Cer da meza?

Err. Christoren sacrificio bat eta aren viciaren eta ilzearen memoria bat.

Gal Nori eguiten diogu sacrificio sandu ori?

---

1235 particulare] jat. *paticulare.*

1236 obec] normalean *ebec* gisakoak erabiltzen ditu Elizaldek; hau da *o-* duen adibide bakarra. Hala ere, ez dugu zuzendu *obec* agertzen delako beste zenbait testutan.

1237 Christio] jat. *Chistio*.

Err. Ayta eternoari.
Gal. Certaco eguiten diogu?
Err. Iru gauzataco: berari graciac edo esquerrac emateco, <62> satisfacio eguiteco eta merchede escaceco.
Gal. Nori aprovechacen diote mecec?
Err. Viciey eta purgatoriocoey.
Gal. Eta ebetatic ceynei principalquiro?
Err. Norengatic erraten, enzuten eta ofrazen diren arengatic.
Gal. Norc enzuten du meza osoa?
Err. Meza gucian presente dagonac, dibertitu bague vere vorondates.
Gal. Nor dago desobligaturic meza enzutera?
Err. Necesidade verdaderoarequi impedituric dagona.

**Bi eta irugarren mandamentuen gañean**

Gal. Cergatic erraten da «Confesatu, <63> comecatu bein berere»?
Err. Cergatic obligacio esten gueiago.
Gal. Eta consejus cembat aldis?
Err. Confesore ongui informatuac aconsejacen duen aldi oro.

**Laugarren mandamentuaren gañean**

Gal. Baruraren preceptoac certara obligacen du?
Err. Ez jatera bein baicic egunean, eta orduan ez gauza debecaturic.
Gal. Noiz bear da bazcaldu?
Err. Eguerdicoan guti gora bera.
Gal. Eta debecacen digute edatea barur egunean?
Err. Ez, baicic edan daiteque edocein ordus.
<64> Gal. Colaciac cembat izan bear du?
Err. Conciencia onetaco genden artean comunqui usacen dena.
Gal. Nor dago escusaturic ez baruceco?
Err. Oguey eta urte bat cumplitu estuena.
Gal. Eta nor gueyago?
Err. Ezin baru daytezquenac adinaren edo enfermedadearen edo trabajuarengatic.
Gal. Cer eguinen du adinaren faltas barur estenac?
Err. Icasi, ensayatu, adina datorreneco.

**Borzgarren mandamentuaren gañean**

Gal. Cein fruituetatic eta cembat zor dugu amarrena?
Err. Obispadoetan usacen den <65> becala, tramparic bague.
Gal. Eta amarrenari eman bear diogu oberena?
Err. Gutienean ez gaistoena, bada gucia ematen digu Jangoycoac.

## Capitulo amecagarrena
## Sacramentuen gañean

Gal. Erranzquizu sacramentuac.

Err. Elizaco sacramentuac[1238] dire zazpi. Amen Jesus.

Gal. Norc eguin citue sacramentuac?

Err. Christoc berac.

Gal. Cer dire sacramentuac?

Err. Medicina espirituale bazuc, sendacen eta justificacen gaytustenac.

Gal. Nola justificacen gaituste?

Err. Ariman ematen digute gracia, campoco aldeco <66> señale ayequi.

Gal. Nola emanen dute gracia campoco aldeco señale ayequi?

Err. Christoren meregimentuac aplicaturic señale ayeri.

Gal. Sacramentuac errecebitu bear dire disposicio onarequi?

Err. Bay, bercela esta errecebituco gracia.

## Batayoaren gañean

Gal. Cer da batayoa?

Err. Jayoze espirituale bat, non ematen diguten gracia eta christioaren señalea.

Gal. Cer lagun ematen digu batayoac christioaren viciarendaco?

Err. Bear diren virtute guciac.

Gal. Eta cer becatu quencen du. <67>

Err. Becatu originalea eta berce edoceyn arquincen badu.

## Confirmacioaren gañean

Gal. Cer da confirmacioa?

Err. Batayoac eman cigun graciaren aumento espirituale bat.

Gal. Nola ematen digu aumentu ori?

Err. Cergatic ematen digun gracia eta indar Christoren fedea confesaceco.

## Penitencia edo confesioaren gañean

Gal. Cer da penitencia?

Err. Batayatu asgueros eguin diren becatuen medicina espirituale bat.

Gal. Cer eguiten du penitenciac?

Err. Ematen du gracia barcaceco becatu pasatuac eta <68> goardaceco etorrico direnetatic.

Gal. Cembat parte ditu penitenciac?

Err. Irur: contricioa, confesioa eta satisfacioa.

Gal. Cer da contricioa?

Err. Damu andi bat, Jangoyco den becala ofendituas proposito firmearequi confesaceco eta emendaceco.

Gal. Cer ondasun ecarcen digu contricioac berac bacarric, sacramenturic bague?

---

1238 sacramentuac] jat. *sacrentuac*.

Err. Verdaderamente daucanari Jangoycoac barcacen dizquio becatu mortale guciac, aniz badire ere, baña atricioac eztu au eguiten.

Gal. Cer da atricioa?

Err. Damu bat Jangoycoa[1239] ofendituas, Jangoycoaren castigoaren veldurres edo becatuaren itsusitasunagatic, <69> proposito firmearequi confesaceco eta emendaceco.

Gal. Contricioac eta atricioac biec dute damu Jangoycoa ofendituas, biac dire bat?

Err. Ez, beguira zazu ongui arracioa, cergatic damu duten.

Gal. Bada, erran zazu ceurorrec.

Err. Contricioac damu du cergatic Jangoycoa Jangoycoa den, baña atricioac damu du Jangoycoaren veldurres.

Gal. Contricioaren damua nobleago edo finago da atricioarena baño?

Err. Bay, cergatic da Jangoycoaren amorea eta bercea Jangoycoaren beldurra.

Gal. Erran zazu ongui diferencia.

Err. Ara: becatu mortalean ilzen dagona, bacarric, <70> apecic bague, eguiten badu contricioa, salbatuco da, baña eguiten badu atricioa ez.

Gal. Atricioarequi solo esta salbatuco?

Err. Ez, baña atricioa juntacen bada confesioarequi, bay.

Gal. Ongui confesaceco bear da contricioa edo atricioa?

Err. Bay, eta asqui da atricioa. Eta contricioa bada obeago.

Gal. Becatuen confessaceco obligacioac certara obligacen gaytu?

Err. Lembiciric ayen pensacera eta erratera guciac, malicias uci vague mortaleric.

Gal. Eta asqui da edocein sacerdoteri becatuac erratea?

Err. Ez, ezpadu licencia ayen absolviceco. <71>

Gal. Eta eriozeco orduan, espada sacerdoteric, erran bear ditu becatuac seglarey?

Err. Ez, baña ongui da ayen ailcinean confesio escacea dolorearequi.

Gal. Eta gayzac ezpadu ematen lecuric eta becatu mortalean badago, ez condenaceco, cer eguinen du?

Err. Erremedioa da contricioa eta Jangoycoaren amorea, idequicea gutinean bere biocean.

Gal. Cer da satisfacioa?

Err. Pagacea penitencias culparen pena.

Gal. Bada, Christoren penac estire asqui guretaco?

Err. Bay, baña alare nay du, arequi batean, guc ere eguin[1240] dezagun satisfacioa.

<72> Gal. Cein obra dire satisfacio eguiteco?

Err. Oracioa, limosna eta barua.

[1239] Jangoycoa] jat. *jangoycao.*
[1240] eguin] jat. *eguy.*

**Comecacioaren gañean**

Gal. Cer da comecacioa?

Err. Jateco espirituale bat, arima sustentacen eta vici eternoa ematen duena.

Gal. Cer ematen digute manjare divino artan?

Err. Christo bera, Jangoyco eta guizona, gucia osoric.

Gal. Nola ematen da? Señalean edo aren figuran?

Err. Ez, baycic errealidadean, bera bere sustancian.

Gal. Non dago Christo?[1241]

Err. Bi lecutan: ceruan eta aldareco sacramentuan.

Gal. Nola dago ceruan?

<73> Err. Gu emen becala.

Gal. Eta nola dago sacramentuan?

Err. Christo gucia ostia gucian, eta Christo gucia ostiaren parte edo zati gucietan eta, alaber, calizan.

Gal. Ostia particen denean, particen da Christo?

Err. Ez, jauna.

Gal. Bada, ceyn aldetara doaye?

Err. Gucia bi aldetara.

Gal. Bada, amar parte eguiten badute?

Err. Gucietan egonen da Christo gucia osoric.

Gal. Nic estaquit nola?

Err. Onlasse: beira zaite ispilu andian eta eguin zazu amar zati ispilua eta gucietan icusico zara len becala.

Gal. Sacramentuan estago oguiaren eta ardoaren sustanciaric?

Err. Ez, jauna, baycic solo daude accidenteac: urrina, colorea eta gustoa.

Gal. Bada, ezpadago oguiric eta <74> ardoric, nola dago aien urrina?

Err. Cergatic lencheago consagratu baño len egon ciren ogui eta ardo.

Gal. Bada, oguiaren eta ardoaren sustancia cer eguin dire?

Err. Convertitu edo itzuli cire Christoren gorpuz eta odolean.

Gal. Noiz eguiten da ori?

Err. Sacerdoteac consagracen duenean.

Gal. Bada, batec jan baleza bi libera ostia consagratuac, ez lizaque sustentatuco?

Err. Bay, jauna.

Gal. Eta edan baleza pinta bat calicetic ordituco?

Err. Bay, jauna.

Gal. Bada, ezpadago an oguiric eta ardoric, nola eguiten da ori?

Err. Cergatic, accidente ayec eguiten dute sustanciaren oficioa.

Gal. Ostian cer dago, gorpuza ala odola re bay?

<75> Err. Gorpuza eta odola, biac.

Gal. Eta calizan cer dago?

---

[1241] Bi lerroon ordena gaizki dago jatorrizko testuan; honelaxe dago: *Err.: Ez bayzic errealida- / -dean, bera bere sustan- / Gal. Non dago Christo? / -cian. / Err. Bi lecutan: ceruan / eta aldareco sacramen- / -tuan.*

Err. Odola eta gorpuza.

Gal. Bada, ostia consagracen denean, orduan oraño calizan dagona, ardoa da?

Err. Bay, jauna.

Gal. Bada, nola egon bear du odola ostian?

Err. Cergatic, nola adisquideac baytire, beti biac acompañatzen[1242] dire.

Gal. Nai nuque berce arracio bat.

Err. Cergatic Christo dago viciric, eta gorpuz vicia ezin dagoque odolic bague, eta odol vicia ezin dagoque gorpuza bague.

Gal. Batec eraman baliz sagrarioco ostia guciac, orduan egoin lizaque sagrarioan Christo?

Err. Ez, jauna, cergatic orduan estago sacramenturic.

Gal. Eta utci bazute forma erdi bat?

Err. Orduan bay, cergatic erran <76> dugu Christo dagola parte gucietan.

Gal. Eta sacristian edo ostiarioan dauden ostietan dago Christo?

Err. Ez, jauna, consagratu arteo.

Gal. Bada, noiz egonen da?

Err. Sacerdoteac consagracen dituenean.

Gal. Au nola eguiten da? Edocein podorearequi?

Err. Podore divinoarequi, sacerdotey comunicaturic.

Gal. Legoac cergatic comecacen dire solo ostiarequi?

Err. Cergatic ostia artan, eta aren parte gucietan dagon Christo gucia.

Gal. Cer disposiciorequi juan bear da comecacera?

Err. Baruric eta confesaturic becatu mortale guciac.

Gal. Comecatu baño len cer pensatu bear dugu?

Err. Nor eldu den sacramentuan, norengana eldu den, nola eta cer finequi.

Gal. Certaco eguin zue jaunac <77> sacramentua ain andia?

Err. Gure ondraceco, gu obligaceco eta abrasteco.

Gal. Eta cer eguin bear dugu comecatuas gueros?

Err. Graciac edo esquerrac eman Jaungoycoari, espaciorequi eta ofrecituaren zervizuari, choil obligatuac becala.

**Oliaduraren gañean**

Gal. Cer da oliadura?

Err. Arimaren azquen convalencecia espirituale bat.

Gal. Cer ondasun eguiten du?

Err. Garbicen ditu becatuen erreliquia edo señaleac, gure ignoracias eta descuidos gueldicen baytire.

Gal. Cergatic goardacen da viciaren azqueneco?

Err. Disponi gaytecen, azquen finarendaco.

---

[1242] acompañatzen] jat. *acompanatzen*.

### Orden eta matrimonioaren gañean

Gal. Cer eyten du ordenaren sacramentuac?

Err. Ematen du gracia ordenatuey, ongui eguiteco bere aficioa.

<78> Gal. Eta matrimonioaren sacramentuac cer eguiten du?

Err. Ezconduey ematen diote gracia ongui viciceco.

### Capitulo amabigarrena
#### Indulgencien gañean

Gal. Sacramentues landara, cer lagun dugu Elizan?

Err. Ur bedeycatua, indulgenciac eta jubileoac.

Gal Cer dire indulgenciac?

Err. Culparengatic zor dugun penaren barcacioac.

Gal. Noren virtutes ematen dizquigute?

Err. Christoren eta sanduen meregimentues.[1243]

Gal. Nola irabasten dire indulgenciac?

Err. Gracian gaudela, eguiten badugu manacen den gucia.

### Capitulo amairugarrena
### Misericordiazco obren gañean

Gal. Erranzquizu misericordiazco obrac.

<79> Err. Obra misericordiascoac dire amalaur. Amen Jesus.

Gal. Cergatic deytcen dire misericordiascoac?

Err. Cergatic estiren zor justicias.

Gal. Noiz obligacen dute justicias?

Err. Necesidade andietan, prudentearen juicioan.

Gal. Ceinec dute meregimentu andiago?

Err. Espiritualec, cergatic ondasun andiago eguiten dute.

Gal. Eta corporalen necesidadea balin bada?

Err. Orduan necesidade andiac eguinen ditu obligacioscoac.

### Capitulo amalaugarrena
### Arimaren enemigoa edo etsayen gañean

Gal. Erranzquizu arimaren etsayac.

Err. Arimaren etsayac dire irur. Amen Jesus.

Gal. Cergatic deicen dire orla?

Err. Cergatic inclinacen gaitusten <80> tentacioarequi gaistaqueriara.

Gal. Bada, Jaungoycoac certaco permiticen du tentacioa?

Err. Gure exercicio eta corona andiarendaco.

Gal. Demonioac nola tentacen gaitu?

Err. Barrenean imincen digu pensamentu gaistoa, eta campoco aldean tropezuac.

Gal. Cer erremedio pensamentu gaistoendaco?

Err. Pensamentu onac, gurucea eta ur bedeicatua.

---

[1243] meregimentues] jat. *merigimentues*.

Gal. Ocasio gaistoendaco cer erremedio?
Err. Oberena da ayetatic escapacea edo iguesitea.
Gal. Eta ezin escapa daytequenean?
Err. Orduan prevenitu, oracio, conseju eta errecatoarequi.
Gal. Munduac nola tentacen gaitu?
Err. Ecarcen ditu munduco dichoac eta uso gaistoac.
Gal. Cer erremedio ayendaco? <81>
Err. Jangoycoaren leguea eta sanduen usoac edo costumbreac.
Gal. Araguiac nola tentacen gaitu?
Err. Inclinacio eta pasione gaistoequi.
Gal. Cer dire pasioneac?
Err. Gueuren baytan, barrenean, furia, turbacio edo colera itsucen gaitustenac.
Gal. Ceyn dire oyec?
Err. Principalenac laur: gozoa, veldurra, esperanza eta dolorea.
Gal. Cer erremedio dugu pasione eben contra?
Err. Jangoycoaren gracia eta virtuteac.

**Capitulo amaborzgarrena**
**Becatuen eta virtuten gañean**

Gal. Erranzquizu becatu mortale edo capitaleac.
Err. Becatu capitaleac dire zazpi. Amen Jesus.
<82> Gal. Cembat generos dire becatuac?
Err. Irur: originalea, venialea eta mortalea.
Gal. Cer da becatu originalea?
Err. Gurequi jayocen den ura, gure lembicico aitenganic eredaturic.
Gal. Cer da becatu mortalea?
Err. Pensacea, erratea, eguitea edo faltacea Jangoycoaren leguearen contra.
Gal. Arimari cer dañu eguiten dió becatu mortaleac?
Err. Quencen dio Jangoycoa, charidadea, gracia, gloria eta condenacen du ifernura.
Gal. Cer da becatu[1244] orren erremedioa?
Err. Penitencia verdaderoa, irugarren sacramentuan[1245] erran dugun becala.
Gal. Eta cer da becatu venialea?
Err. Arima ilzen estuena, baña gaizquicen duena.
Gal. Nola gaizquizen du?
<83> Err. Cergatic ozten du eta disponicen mortalaren eguiteco.
Gal. Cergatic deicen da venialea?
Err. Cergatic facilquiro eguiten den eta barcacen ere bay.
Gal. Cembat gaucequi barcacen da?
Err. Len erran ditugun bedraci gauza ayequi.
Gal. Zazpi becatu ayec cergatic deicen dire capitaleac edo burucoac?

---

[1244] becatu] jat. *becntu*.
[1245] sacramentuan] jat. *sacrameutuan*.

Err. Cergatic berce aniz becaturen buruac diren.

Gal. Soberviac eta avariciac becatu mortaleac dire?

Err. Ez guciac, baycic solo Jangoycoaren eta proximo lagunaren contra direnac.

Gal. Eta noiz dire charidadearen contra.

Err. Austen denean Jangoycoaren edo Elizaren mandamentuaren bat.

<84> Gal. Cer da soberbia?

Err. Apetitu desordenatu bat, bercea baño gueyago izateco.

Gal. Cer da humildadea?

Err. Inclinacio bat bere despreciaceco.

Gal. Cer da abaricia?

Err. Apetitu[1246] desordenatu bat haciendarengana.

Gal. Eta cer da liberalidadea?

Err. Inclinacio bat emateco, nola eta noiz conveni denean.

Gal. Cer da luxuria?

Err. Apetitu torpea gauza carnaletara.

Gal. Cer da castitadea?

Err. Garbitasunaren[1247] inclinacioa.

Gal. Cer da ira?

Err. Mendecaceco apetitu desordenatua.

Gal. Eta mansedumbrea cer da?

Err. Iraren aplacacea.

Gal. Cer da paciencia?

Err. Tristeza gutico bat trabajuetan. Edo tristatu bague sufritu.

<85> Gal. Cer da gula?

Err. Apetitu desordenatu bat jatera eta edatera.

Gal. Eta templanza cer da?

Err. Apetitu aren frenoa.

Gal. Cer da embidia?

Err. Tristeza bercearen ondasunengatic.

Gal. Eta proximoaren charidadea cer da?

Err. Bercearen ondasun edo gaiza sentitcea, berea becala.

Gal. Cer da pereza?

Err. Triste eta latso ibilcea Jangoycoaren gaucetan.

Gal. Eta diligencia cer da?

Err. Fite eta laster eta gustorequi eguitea Jangoycoaren gauzac.

### Capitulo amaseygarrena
### Virtute theologalen eta cardinalen gañean

Gal. Erranzquizu virtuteac.

Err. Virtuteac dire zazpi. Amen Jesus.

Gal. Cer nay du erran virtute <86> theologaleac?

---

1246 apetitu] jat. *aptitu*.

1247 Garbitasunaren] jat. *Gerbitasunar*ẽ.

Err. Virtute divinoac.

Gal. Cergatic daucate izen ain andia?

Err. Cergatic juntacen gaitusten Jangoycoarequi, eta solo berac ematen dituen.

Gal. Cer da fedea?

Err. Argui bat eta ezaumentu sobrenaturale bat, ceynequi icusi bague sinestacen dugu Jangoycoac erraten duena eta Elizac eracusten diguna.

Gal. Badacusazu nola Jangoycoa den iru persona eta, alare, Jangoyco bat? Edo Christo nola den Jangoyco eta guizon?

Err. Ez, baña[1248] sinestacen dut icusten dudana baño obequi.

Gal. Cergatic sinestacen duzu ayn ciertoqui?

Err. Cergatic Jangoycoac erraten duen eta Elizac eracusten.

Gal. Cer da esperanza?

Err. Echidetea bienaventuranza eta beraren alcanzaceco <87> medioac.

Gal. Certan dago gure bienaventuranza?

Err. Jangoycoa bere baytan icustean, onesicean eta gozacean betiraco.[1249]

Gal. Nola alcanzacen da?

Err. Jangoycoaren graciarequi, Christoren meregimentuequi eta gure obra onequi.

Gal: Cer da charidadea?

Err. Jangoycoa onesicea gauza gucien gañetic eta proximoa gueren burua becala.

**Virtute cardinaleen gañean**

Gal. Cergatic deicen dire cardinaleac virtute ebec?

Err. Cergatic choil principaleac diren, eta berze aniz virtuteren zañac.

Gal. Cer oficio du prudenciac?

Err. Iduqui erdia bi estremoren artean[1250] edo compondu porfiac.

Gal. Cer oficio du justiciac?

Err. Eman bat bedrari bere <88> derechoa[1251] edo arracioa.

Gal. Cer oficio du fortalezac?

Err. Moderatu enfadoac eta atrevimentuac.

Gal. Cer oficio du templanzac?

Err. Enfrenatu gula eta apetitu sensualeac.

Gal. Cein da virtuteric andiena?

Err. Charidadea, oyey ematen baitiote bicia eta chussencen dituena.

Gal. Cer finetara chussencen ditu?

Err. Jangoycoarengana, norequi berac juntacen gaituen.

Gal. Jangoycoaren ailcinean, cein guizon da sanduago?

Err. Charidade gueyago daucana, edocein balin bada re.

---

[1248] baña] jat. *bana*.

[1249] betiraco] jat. *betiroco*.

[1250] artean] jat. *arteam*.

[1251] derechoa] aurreko orrialdearen azken zatia *de-* da, *derecho*-ren lehen silaba. Baina <88> orrialdean hitza bera osorik dator eta apeuan ere *de-* dator.

Gal. Norc dauca charidade[1252] andiago?
Err. Mandamentuac obequi goardacen dituenac.
Gal. Evangelioaren consejuac cembat dire?
Err. Irur: pobreza voluntarioa, castidadea eta obediencian <89> vicicea.
Gal. Conseju ebec certaco cerbizazen dute?
Err. Obequi guardaceco preceptoac eta mandamentuac.

**Capitulo amazazpigarrena**
**Arimaren potencien gañean**

Gal. Erranzquizu arimaren potenciac.
Err. Arimaren potenciac dire irur. Amen Jesus.
Gal. Certaco eman cigu Jangoycoac entendimentua?
Err. Beraren ezauceco eta aren gauzetan pensaceco.
Gal. Certaco da memoria?
Err. Oroit gaitecen beraren legueas eta merchedes.
Gal. Certaco vorondatea eta libertatea?
Err. Guc bera onetsiceco ota meregimentuarequi eguiteco beraren vorondatea.

**Sentido corporaleen gañean**

<90> Gal. Erranzquizu sentido corporaleac.
Err. Sentido corporaleac dire borz. Amen Jesus.
Gal. Certaco eman dizquigu Jangoycoac sentidoac eta berce miembro guciac?
Err. Guciequi bera cervizaceco gauza gucietan.

**Capitulo emezorcigarrena**
**Espiritu Sanduaren donen gañean**

Gal. Erranzquizu[1253] Espiritu Sanduaren donac.
Err. Espiritu sanduaren donac dire zazpi. Amen Jesus.
Gal. Certaco dire Espiritu Sanduaren donac?
Err. Gu obediente eguiteco Jangoycoaren inspiracioei.
Gal. Certaco da entendimentuaren dona?
Err. Guri adicera emateco eguiac.
Gal. Eta sabiduriaren dona?
Err. Eguia oyes ongui juzgacerá <91> eguinarasteco.
Gal. Eta consejuaren dona?
Err. Jangoycoari consultaceco gauza agradableac.
Gal. Eta cienciaren dona?
Err. Escogiceco ongui consultatu dena.
Gal. Eta piedadearen dona?
Err. Concertacen du arima Jangoycoarequi.

[1252] charidade] jat. *chridade*.
[1253] Erranzquizu] jat. *Erranquizu*.

Gal. Eta veldurraren eta fortalezaren dona?
Err. Concertacen du ongui berarequi.
Gal. Bada, au guciau está virtuten oficioa?
Err. Virtutec ecarcen gaytuste arraciora eta bear den leguera, eta donec Espiritu Sanduaren movimentuetara.

**Espiritu Sanduaren frutuen gañean**

Gal. Erranzquizu Espiritu Sanduaren frutuac.
Err. Espiritu Sanduaren frutuac dire amabi. Amen Jesus.
<92> Gal. Cer dire Espiritu Sanduaren frutuac?
Err. Fruta arbolean becala, virtuteen suavidaderic andiena eta perfectoa.

**Capitulo emeretcigarren**a
**Bienaventuranzaen gañean**

Gal. Erranzquizu bienaventuranzac.
Err. Bienventuranzac diré zorzi. Amen Jesus.
Gal. Cer dire bienaventuranzac?
Err. Virtuteen eta Espiritu Sanduaren donen obraric oberenac.
Gal. Nor dire espiritu pobre dutenac?
Err. Nai estuenac honrraric, eta ez abrastasun chiquiric ere.
Gal. Nor dire mansoac?
Err. Iraric edo iraren movimenturic estutenac.
Gal. Nola dire lurraren jabeac?
Err. Berac, bere jaun diren becala.
<93> Gal. Nor dire negar eguiten dutenac?
Err. Placer chiquiac ere usten ditustenac.
Gal. Nor dire justiciaren gose eta egarri direnac?
Err. Fervorearequi eguiten dutenac bear den gucia.
Gal. Nor dire misericordiosoac?
Err. Choil piadoso direnac, naiz campocoequi ere.
Gal. Nor dire bioz garvia dutenac?
Err. Mortificacen direnac beren passionetan.
Gal. Nor dire pacificoac?
Err. Bere eta berceren baitan baquea eguiten dutenac.
Gal. Nor dire justiciarengatic padecicen dutenac.
Err. Justician firme daudenac, perseguicen badituste ere.
Gal. Obra ebec cergatic deicen dire bienaventuranzac?
Err. Cergatic ebetan dago mundu ontaco felicidadea eta berce munduco esperanza.

<94> **Nola Confessa eta comecatu bear den**

Lembicicoa, oroitu bear du bere becatues. Eta ontaco pensatu bear ditu irur gauza: non egon den, norequi ibili den eta cer oficioetan empleatu den. Orrequi etorcen dire becatuac memoriara.

Joan bear du mandamentu gucietatic barrena, icusis ceinetan erori den pensamentus, itces edo obras. Au eguinas gueros, consideratu bear du Jan-

goycoari eguin dion ofensa eta bere arimari eguin dion gaiza. Damutu bear du dolore eta urriquimentu andiarequi eta proposito firmearequi, ez beiñ ere becaturic eguiteco.

Imini bedi confessorearen oñetan belaurico, guticoat apartaturic. Ez confessorearen aurcas, baycic aldean. Eta beguiac lurrera beiracen dutela erran bear du confesioa, eta erran bear dizquio confessoreari <95> cembat becatu mortalea eguin dituen. Eta ezpadago seguro cembat diren, erran bear du guti gora vera cembat diren. Eta ez bein ere utci becaturic alques, cergatic Jangoycoari erraten dizquio confessacen denean. Eta sacrilegio andia da becatu mortalea isilcea confesioan, eta berdin berce aldian dauca oblicacio eguia erratera, eta confessio artaco gauza guciac berris confessacera, cergatic gaizqui confessatu cen. Comecacera doayenean badaqui baruric egon bear duela. Comecaceracoan pensatu bear du Jangoycoa eldu dela orrequi egotera eta orren ariman sarcera. Eta comecatu asgueros, ez bereala joan elizatic, baicic graciac eta esquerrac eman Jangoycoari, cergatic orren visitatcera etorri den.

<96> **Au aisquide chiquiendaco**

Liburu andian dago luceago andien eta zarrendaco.

Icusi ditut aniz libru debocio andiequi egun gucico eta ordu gucietaco. Baña ori da ongui frailen eta serorendaco, baña ez berce guciendaco. Devocio galanta eta facila christio guciendaco da etciteracoan eta vesticeracoan laur oracioac erratea, cein baytire ceñacea eta pater nosterra, avemaria eta salvea. Credoa esta oracioa. An estugu deus escacen, baicic sinestacen dugu an dagon gucia. Devocio onen arracioa da, cergatic Christoren gurucea aurpeguian dramanari, ezin guerta daquioque gauza gaistoric, ez egunas eta ez gauhas.

*FINA*

### *2.4.2.1.2. Iruzkina*

Grafia aldetik, Elizalde bide da autore zaharren artean <v> eta <u>-ren erabilera sistematikoki bereizi zuen lehena (Urgell 2006b). Bestalde, txistukarietarako ez du <ç> grafema erabiltzen, eta bizkarkaria islatzeko <z> erabiltzen du bokal guztiekin eta batzuetan <c> jartzen du <e> eta <i> aurretik. Horrezaz landara, batzuetan afrikatuak islatzen ditu: *gurutce*, *gaitzazu* (4), *etsayetatic* (4). Halere, ez du sistematikoki egiten, eta gehiago dira bereizketa ez duten adibideak: *ceñacea*, *santiguacea* (4), *gaizazu* (5). Bestalde, batzuetan badirudi igurzkari sabaiaurrekoa islatzeko <ss> darabilela: *onelasse* (4), *berlasse* (4), *issil* (58). Edonola ere, <ss> guztiak ez dira sabaiaurrekoak, batzuetan igurzkari apikaria islatzeko erabiltzen baita: *missionero*, *confessore* (azala), *Clementissima* (7), *confessazea* (9), *confessio* (17). Badirudi horietan, batzuetan behintzat, etimologiak edo mailegu izateak baduela eraginik. Grafiarekin bukatzeko, aipagarri dirateke zenbait hitzek duten <`> tileta; hauek aurkitu ditugu: *dá* (*passim*), *zará* (21), *juzgacerá* (90), *está* (91), *bién* (34), *diré* (92), *ematecó* (37), *dió* (82). Ohartzen bagara, guztiak dira azken silaban.

Fonologia aldetik, ez dago bokalei loturiko bilakabide nabarmenik. Behin *oa* > *ua* aldaketaren adibide bat dugu: *juan* (76), baina *joan* (94) ere badago. Bestetik, bikoitzak soildurik agertzen dira: *virtutequi* (36), *andrequi* (54), baina behin *biena-*

*venturanzaen* (92) dugu. Dena den, azken hori inprentako hutsa ere izan daiteke. Herskariei dagokienez, hitz hasieran ahostuna egiten da: *becatu* (*passim*), *butzu* (39). Txistukariei dagokienez, herskari aurretik igurzkariak apikariaren alde neutralizatzen dira: *estaquitenei* (1), *emaste* (6), *gaistoei*, *citusten*, *ecitusten* (12), *estaquienari* (13), *estu* (*passim*). Noski, salbuespen bakanik bada: *eztu* (bi aldiz bakarrik) eta *ozten* (83). Nolanahi ere, neutralizazio hau /t/-ren aurretik bakarrik gertatzen da, bestelako herskarietan sistematikoki bizkarkaria baitugu hala egokitzen denean: *ezcaizazula, bazcoa* (*passim*), *Ezconduec* (54), *azquen* (*passim*), *daytezquenac* (64), *dizquio* (*passim*). Kontsonante multzoei dagokienez, *-r(t)z-* mantentzen da: *berce, berceraino* (*passim*), *borz* (5). Hasperenaren aztarnarik ez bada ere, bere galerak utzitako hiatoa saihesteko *-g-* gehitu da: *agoan* (*passim*), *iguesitea* (80). Sinkopa indartsua da: *atraceco* (3), *atra* (11), *icusco* (17) baina *icusico* (72), *bedraci* (17), *libru* (95) baina orrialde berean *liburu*, *dramanari* (95). Hizkera mintzatutik gertu daudeke bokal arteko herskari ahostunaren galerak, besteak beste: *beyra* (11), *galdeiten* (*passim*), *eyteco*, *eynen* (52), *nausietan* (54), *guticoat* (94). Adibide horiekin batera, bokalen kasuan *ber* (20) 'behar' forma bakundua dugu. Akaso, sail horretan sartu behar dugu *justician gose* (16) 'justiziaren gose'. Fonologiarekin amaitzeko, *-ale* dago maileguetan: *originaleric* (4), *capitaleac* (*passim*), *mortale edo veniale* (51). Era berean, *-ionis* amaieradun latindar maileguetan *-ione* dugu: *pasione* (81); halere, *pasio* erabiltzen da Jesukristok bizi izandakoa aipatzeko. Amaitzeko, *re-*z hasten diren maileguetan *er-* eransten du: *erregla* (46, bi aldiz), *erreyna* (47), *erreliquia* (77).

Morfologiari dagokionez, *ceurorrec* (69) izenordain indartua agertzen da, eta posesiboetan *ceure*, *neure* (*passim*) erabiltzen ditu, baina lehen pertsona pluralean *gueuren* (*passim*) eta, behin, *gueren* (87) pleonastikoa ageri da, inoiz ez *gueure*. Bestalde, erakusleetan lehen gradukoan *ebec* (*passim*), *ebetatic* (17), *ebetan* (43) adibideak ditugu. Behin *obec* (60) agertzen da, baina hutsa izan daiteke. Hirugarren gradukoan *arren* (3), *arrenganic* (49) bitan, baina *aren* (*passim*) erruz dugu. Artikulu hurbila ez da agertzen, fosilduriko formetan ez bada: *desterratuoc* (7), *bioc* (*passim*). Aldiz, espero genezakeen lekuetan ez da agertzen: *gu becatariengatic* (6). Zenbatzaileetan, *irur* eta *laur* (*passim*) aldaera zaharrak lekukotzen dira. Horrezaz gain, *bi* izenaren eskuin agertzen da adibide batean: *Jangoyco bi* (31), baina *bi hitz* (21), *bi naturaleza* (22), *bi lecutan* (72) etab. ditugu.

Ergatiboan sistematikoki erabiltzen du *-ek* aldaera: *Apecec eta leitcen daquitenec eracusteco* (azala), *profetec prometitu zutena* (22), *gure etsaiec perseguicen gaitusten* (24), *guizonec eguin dezatela* (44). Dena den, adibideren batean *-ak* dago: *Eta beguiac lurrera beiracen dutela erran bear du confesioa* (94). Datibo pluralean *-ei* agertzen da, baina *ayeri* (45, 66) eta *bienaventuratueri* (18, bi aldiz). Halaber, instrumentalean beti da aldaera apikaria: *gracias* (5), *gucis*, *obras* (6), *deyes*, *suspiros*, *ayes*, *negarres* (7). Sistematikoa da, halaber, soziatiboan *-reki* aldaera: *zeurequi* (6), *pacienciarequi* (13), *devociorequi*, *comecacearequi* (17). Destinatiboan beti *-endako* erabiltzen da: *apecendaco* (1), *ondrarendaco*, *provechuarendaco* (8). Halere, bi kasutan badirudi genitiboa baliatzen dela destinatiboan, baina bietan kopula bidez destinatibo batekin loturik: *Lembicico irurac Jangoycoaren eta berce laurac guretaco* (43), *Arimaren eta gorpuzarendaco bear den gucia* (44). Badirudi bi adibide horietan bigarrengoaren destinatibo markak lehenarentzat ere balio duela. Bizidunen kasuetarako *baitan* duen egitura erabiltzen da: *criazailearen baitan*, *seme bacarraren baitan* (6), *Espiritu Sanduaren bai-*

*tan* (6). Nolanahi ere, aldiz, bizidunen ablatiboan eta adlatiboan *-gan-* dago, *andre Maria virginarenganic* (6), *zuregana* (7), *arrenganic* (59) adibideetan ikusten denez. Bizigabeetan, pluraleko ablatiboan *-etatik* forma berria besterik ez dago: *gaistoetatic*, *itzetatic* (3), *copetatic* (4), *ebetatic* (17). Behin, bederen, denbora muga islatzeko *-o* erabiltzen da: *consagratu arteo* (76).

Aditz morfologiaz den bezainbatean, jokatugabeetan *onesicea* (*passim*), *onesicen* (19), *asicean* (24), *erdechicen* (36) ditugu, alegia, aditz-izena partizipioaren gainean eraikia da. Halere, ez da beti hala egiten: *eracusten* (*passim*), *austen* (*passim*), *irabasten* (78), *icusten* (86), *usten* (93). Geroaldian, *eguinen*, *erranen*, *egonen* (*passim*), *iraunen* (41) formak ditugu. Behin bada ere, *egoin* (75) 'egonen' forma uzkurtua lekukotzen da.

Aditz jokatuetan, azpimarratzekoa dirudi *izan* aditzaren orainaldiko hirugarren forma plurala *dire* dela beti, eta inoiz ez *dira*. Bestalde, **edun* aditzaren orainaldiko erroa *-u-* da: *dugu*, *dut*, *duzu* (*passim*). Horrezaz landara, adizki trinkoen erabilera ez da ugaria eta fosildutakoak dira lekukotasun asko; esate baterako, jusibo trinkoa: *digula gloria* (44). Agintera trinkoa gutxi eta fosildurik agertzen da: *iguzu egun gure egunorosco oguia* (44). Orobat, ahalera trinkoa: *ezin dagoque odolic*, *ezin dagoque gorpuza* (75), *dateque* (*passim*). *Joan* aditzean *doaiena* (13), *doaye* (73) forma nafarrak agertzen dira. *Etorri* aditzaren *datorren* forma jokatuaren ordezko *eldu den* lekukotzen da: *nor eldu den sacramentuan, norengana eldu den, nola eta cer finequi* (76), *Comecaceracoan pensatu bear du Jangoycoa eldu dela orrequi egotera* (94). Iraganeko adizkietan sistematikoki galtzen da amaierako *-n*: *il ce* (3), *concebitu baize*, *jayo ce*, *padecitu zue*, *gurucificatu zute*, *il zute*, *orzi zute* (6).

Indikatiboko NOR-NORI-NORK sailean, *-i(n)-* erroa erabiltzen da beti, ez da **eradun* agertzen: *egiten diot* (18), *galdeiten diotenean* (20), *ematen digu* (35). Indikatibokoak ez diren perifrasietan aditzoina mantentzen da *-tu*-z amaitzen den aditzekin: *salva zaizala* (*passim*), *santifica bedi* (5), *libera gaizazu* (5), *eracutsi dazaguzu* (7), *onesi dezagula* (26). Aitzitik, *-i* partizipiodunekik ez da beti aditzoina erabiltzen: *issil daiteque* (58), *imin zazu* (37) agertzen dira, eta bi alditan *icusagun* (23, 24) dago, baina fosilduriko egitura dirudi; aldiz, zazpi alditan *-i* partizipioarekin ageri da: *etorri bedi* (5), *imini bedi* (94), etab (ik. E § 3.1). Indikatibokoa ez den NOR-NORK sailean **ezan* agertzen da beti: *eguin dezaten* (18), *erran dezala* (20), *sinesta dezagula* (26), *cumpli dezaquegu* (27). Gainera, aginterazko formetan aferesia gertatu da, eta beti *zazu* erabiltzen da (ik. E. § 3.2). Behin bada ere, apokopea du *eraman baliz* 'eraman balitza' (75) adibideak. NOR-NORI-NORK sailean, adizki ezberdina erabiltzen da agintera izan edo subjuntiboa izan. Aginterazko perifrasietan **erazan* agertzen da: *eman dazaguzu*, *barca dazquiguzu* (5), *eracutsi dazaguzu* (7). Aldiz, subjuntiboa denean **ezan* erabiltzen duela dirudi: *esca dezogungatic* 'eska diezaiogun' (42). Ahalerazko formetan *-teke* nagusi bada ere, *daiteque* (*passim*), inoiz *-ke* soila agertzen da: *daique* (28), *dayque* (58), *lizaque* (74). Baldintzazkoetan *jan baleza*, *edan baleza* (74), *eraman baliz* (75) perifrasi zaharra dugu protasian. Pluralgileen artean, nabarmena da *-te*-ren hedadura; hau adibide: *zaizquioteney* (61). Bestalde, pluralgileez dihardugula, **edun* aditzaren iraganaldian *-z* erabiltzen da ergatiboaren pluralgiletako: *guinduzan* (23). Gainera, **ezan* aditzaren kasuan, *-it-* → *-zki-* aldaketa gertatu da: *mereji dezazquigun* (7), *erranzquizu* (*passim*).

Azkenik, datibo komunztadura ez da nahitaezkoa: *confessacen naiz Jangoyco omnipotenteari* (18), *otoiz eguin dezaten enegatic gure Jangoycoari* (19), *Eguin bear dugu*

*oracio ainguiruei eta sanduey*? (46), *oracio ebec estitugu eyten Jangoycoari eta bere amari?*, *baña sanduen medios escazen da Jangoicoari* (48). Pluraleko komunztadura ere ez bide da nahitaezkoa: *ezpadu charidadea eta obra onac* (28).

Sintaxi aldetik, nabarmentzeko ezaugarria da TO-GEN egituraren erabilera: *il ce gure salvaceco, becatutic gu atraceco* (3), *ilen eta vicien juzgazera* (6, 12). Bestetik, hainbat aditzen osagarrietan, aditz-izena adlatiboan jarri ohi da: *utzi tentacioan erorzera* (5), *obligacio andia dugu jaquitera eta entendazera* (27). Kausazko perpausetan *cergatic* edo *ceren* ondotik aditz laguntzaileak *-(e)n* darama batzuetan: *cergatic Jangoyco viciaren seme naturalea den* (21), *Cergatic dembora gucietan gure etsaiec perseguicen gaitusten* (24). Halere, ez da beti hala: *cergatic ayena da cerua*, *cergatic ayec izanen dire* (16). Ezezko perpausaren hurrenkera zaharraren arrastorik ere bada: *apartace esta* (40). Erlatibozkoetan izenaren eskuin duen perpausik bada: *colera itsucen gaitustenec* (81). Helburuzko perpausak egiteko moduetako bat subjuntibozko perifrasiari *-gatik* eranstea da: *guc esca dezogungatic* (42).

Linschmann-Aresti legeari dagokionez, oro har, ongi erabiltzen da: *Eman dazaguzu egun gueuren egunorosco oguia* (5).

Iruzkinarekin amaitzeko, lexikoan aipatzeko izan daitezke ondoko aldaerok: *bedeicioarequi* (17) 'bedeinkazioarekin'. 'Belauniko' adierarekin, *belaurico* (94) erabiltzen du. 'Bederen' esateko *verere* (9) eta *berere* (63) aldaera erabitzen du. Bestalde, *jaichi* (39) eta *jauchi* (38, 39) bi aldaerak agertzen dira dotrinan 'jaitsi' esateko. 'Gerri' esanahiarekin, *guerruncean* (14) aldaera erabiltzen da; 'usaintze' esateko *usmacea* (15) agertzen da, baina 'usain' esan nahi duen *urrina* (73, 74) dakar. 'Behatz lodia' izendatzeko *beaz* darabil eta gainerakoak *eriac* direla dirudi: *Escuyeco beaza lembicico eriarequi guruzaturic* (23). Behin eta berriz agertzen da *sinestatu* (*passim*) aldaera nafarra. 'Etzaterakoan' adiera duen *etciteracoan* (96) ere agertzen da. Aldaerekin amaitzeko, *pedricu* (60), baina *predicadore* (azala), metatesidun aldaera agertzen da, behin bakarrik izan arren; beste behin *egu* (1) agertzen da 'gaurko eguna' adierazteko, Aezkoan erabiltzen den bezala. Edonola ere, gainerako adibide guztietan *egun* dago.

# III
# GOI-NAFARRERA ARKAIKO ETA ZAHARRAREN HIZKUNTZA-EZAUGARRIAK

Aurreko atalean goi-nafarreraz idatzitako 1745 aurreko testu ezagun guztiak editatu, aztertu eta iruzkindu ditugu. Oraingo atalean testu horien azterketatik ateratako hizkuntza ezaugarri nagusiei xehetasun gehiagorekin begiratuko diegu, kronologia eta geografia kontuan hartuta. Azterketarekin hasi aurretik, hala ere, ohar zenbait egin nahiko genituzke.

Liburu osoan zehar, eta, beraz baita atal honetan ere, goi-nafarrera dialektotzat hartu dugu. Dena den, Coseriuk (1977: 137) azpimarratu zuenez, izatez dialektoak abstrakzioak dira, isoglosen arabera eraikiak. Maiz, gainera, dialektoen artean elkarreraginak daudenez, isoglosa batzuek dialekto bat baino gehiago zeharka ditzakete (ik., halaber, Mitxelena 1981: 520; Lakarra 2011: 160). Era berean, isoglosak etengabe aldatzen dira, eremua zabaldu eta murrizten dute denboraren poderioz, isoglosa berriak sortzen dira eta lehen zeudenak ezabatu (Pilch 1988: 419).

Horrezaz landara, edo horrekin batean, denboran zehar dialekto batek izan dituen ezaugarriak aztertu nahi ditugunean, hizkuntza-komunitatea ere kontuan hartu behar dugu. Jakin behar da, besteak beste, komunitate isolatua izan den ala besteekin harreman estuagoa izan duen. Finean, hiztun taldeak nekez mantentzen dira egonkor denbora luzez, are gutxiago goi-nafarreraz mintzo den erdiguneko, eta ez bazterreko, gizatalde bat. Horixe da, hain zuzen ere, goi-nafarreraren ezaugarri nagusietariko bat: bere kokapen geografiko-linguistikoa. Horrek bere berezitasunak eta zailtasunak eransten dizkio azterketari. Caminok (2009: 348) baieztatzen duenez,

> [h]izkuntzetan gauza arrunta da erdiguneko dialektoak izatea definitzen zailenak, erdiguneetako mintzo horietan ezaugarrien aniztasuna handia izaten baita: erdiguneko mintzoak kokatzen diren eremu hauetara hedadura geografiko arras desberdineko ezaugarriak biltzen dira.

Andersenek (1988: 39) dioenez, dialektologia historikoan gehien iraun duen gogoeta da ertzetako eta erdiguneko hizkeren eta dialektoen garapenarena. Areago, mota ezberdineko bilakabideak gertatzen dira, dirudienez, periferian eta erdialdean:

> Regardless of the uncertainities of inferring past developments from present isogloses configurations, which have been at the center of decades long discussions of Bartoli's «norms», the fact remains that in the experience of most historical dialectologists, regardless of which language areas they work with, there are palpable differences between the kinds of developments that characteristically occur in central and in peripherical speech areas. (Andersen 1988: 39)

Beraz, berezia da Nafarroaren kokagunea, linguistikoki bederen. Euskararen eremuaren erdi-erdian dago; hainbat dialektorekin egiten du muga, baina baita erromantzearen eremuarekin ere hegoaldean eta ekialdean. Bestalde, erdigune indartsu bateratzaile bat izan bide du, herrialdeko hiriburua —Iruñea—; baina zehazki ezin dugu esan noiz arte izan den dialektoaren foku eta ardatz (ik. lan honetan § 4 eta Camino 2013a).

Bestalde, goi-nafarreraren bilakabidean garrantzia, gutxi edo asko, izan duten beste foku batzuk baditu inguruan Nafarroak; batez ere, Gasteiz mendebaldean, Beterri ipar-mendebaldean eta Lapurdi iparraldean. Foku horiek goi-nafarreraren edo bertako zenbait hizkeraren bilakabidean izan duten eragina aztertzeko dago oraindik (ik. dena dela Zuazo 2010a; Erdozia 2006, 2008). Ezbairik gabe, egoera, baldintza eta berezitasun guztiek eragina izan dute dialektoaren sorreran eta garapenean. Hori dela eta, erdiguneko dialektoetako ezaugarri bereizgarriak ez dira aurkitzen errazak.

Hala eta guztiz ere, goi-nafarrerak baditu berezko ezaugarriak; beste dialektoetan ez daudenak, alegia. Zuazok (1998a: 215) egindako euskalkien lehen sailkapenean nafarrerazko berezko bost ezaugarri hauek aipatu zituen:

1. Aferesiak eta sinkopak azentu indartsuaren ondorioz.
2. Instrumentaleko *-s*.
3. Aditzetako 2. pertsona singularrean *y-* agertzea.
4. Geroaldian eta [partizipioa + *behar*] egituran *-tu* > *-ti* bilakatzea.
5. NOR-NORI-NORK saileko pluralgilea *-it-* izatea.

Ikerketa berriagoetan (Zuazo 2003, 2008), bost horietaz gain, beste bi gehitu ditu: erdal *-(i)ón* «bere horretan» uztea: *frontona*, *marrona*, *melokotona*… eta NOR-NORI saileko iraganeko adizkietan *-ki-* erroa erabiltzea. Azken horrek Sakanan indar handia duela dio, eta orainaldira heldu bide da. Bestalde, «garatu gabeko arau» bat ere ematen du (Zuazo 2008: 109-110): *oa-* > *goa-* egitea. Azkenik, «*-(r)en bat* > *-(r)on bat*» aldaketa gehitu du (Zuazo 2014: 108).

Beste lan batean, Zuazok (1998b) goi-nafarreraren ezaugarri gehiago bildu zituen, fonologiaren, izen eta aditz morfologiaren, morfosintaxiaren eta hiztegiaren arabera sailkatuak. Guztira hogeita zazpi ezaugarritan «euskara nafarra» «erdialdeko euskaratik» bereizteko aski arrazoi badirela erakutsi zuen (Zuazo 1998b: 17). Nolanahi ere den, ezaugarri guztiok gaur egungo goi-nafarreran agertzen dira, eta azterketatik baztertu ditu (ia) galdurik den hegoaldeko goi-nafarreran agertzen diren ezaugarriak.

Bestalde, Caminok (2009: 348) goi-nafarreraren bost ezaugarri esklusibo dakuski, baina ez dira guztiak Zuazok eman zituenak:

1. Instrumentaleko atzizkia *-s* apikaria izatea.
2. Nor-i dagokion *y-* morfema agertzea 2. pertsona singularrean.
3. *-zki-* > *-it-* aldaketa egitea NOR-NORI-NORK sailean.
4. «*Joan*» aditzaren adizkietan *noaie, (g)oaie, doaie* agertzea.
5. Maileguetan *-on* atzizkia egotea.

Gainera, Zuazok emandako 1. eta 4. ezaugarriak ez ditu nafarrerazko esklusibotzat hartzen, ez baitira hizkera guztietan agertzen; aitzitik, goi-nafarrerazko ezaugarri bateratzaile ez-esklusibotzat hartzen ditu (Camino 2009: 349). Bestalde, esklusiboak ez diren, baina goi-nafarrerako hizkeretan agertzen diren ezaugarri andana

biltzen ditu Caminok (2009: 349-352). Hala eta guztiz ere, Apalauzak (2012: 524) azaltzen duenez, Caminok (2009: 349) nafarreraren ezaugarri esklusibotzat hartzen dituen ezaugarri guztiok ez dira hizkera guztietan beti batera ageri. Ultzaman, Erroibarren eta Esteribarren bostak agertzen dira, baina Sakanako erdialdean bostetik hiru ditugu, Aezkoan bostetik lau —ez baita *-it-* pluralgilea *-zki*-ren ordez—; Bortzirietan eta Malerrekan ez dago instrumentaleko aldaera apikaria, baina bai beste laurak.

Zuazoren sailkapenak, Bonaparterenak bezala, euskararen irudi sinkroniko bat islatzen du; berrikuntza berrienak hartzen ditu aintzat zaharragoak eta arkaismoak kontuan izan gabe (ik. metodo honi egindako kritika: Lakarra 2011: 177-178; Ulibarri 2015: 15-16). Horrela, historiako une zehatz batean, hots gaur egun, euskararen banaketa dialektala zertan den erakusten du, baina, gure irudiko, hizkeraren errealitate bat ezkutatzen du, dialektoaren bilakabidea nolakoa izan den ulertzen lagun dezaketen ezaugarri batzuk baztertzen baitira, hala nola *e-o* > *o-o* eta *o-e* > *o-o* bilakabideak, **-ani* > *-ai(n)* aldaketak, **erazan* aditz laguntzailea. Hemen zerrendatu ditugun bilakabide guztiak ez dira goi-nafarreraren berezko ezaugarriak, baina aldaketa eta ezaugarri horiek zein beste dialektorekin partekatzen dituen begiratzea dialektoen historia ulertzeko lagungarri izan daiteke. Gainera, Zuazoren lanetan ez da erakusten nola gertatu zen euskararen dialektalizazioa, nahiz eta egoera sinkroniko horretatik abiaturik, ondorio historikoak ateratzen saiatzen den (ik. Zuazo 2008: 33-34 edo Zuazo 2010b).

Honetaz dihardugularik, merezi du Caminok (2008a: 102) Nafarroa Behereko euskara zaharraz esandakoa hona ekarri eta gure egitea:

> Dialektologiaren eta dialektoen garai berrienen ezagutzan oinarritzen den ikertzailea, hizkuntzaren egungo agerpen geografiko-diatopikotik abiatzen da eta XX. nahiz XIX. mendeetako datuak eta aldaerak darabiltza aiseen, baina dialektoen harat-honat historikoen berri jakin eta erakutsi nahi baldin badu, denboraren ardatzari begira jarri behar du; ikuspegi filologikotik eta diakronikotik so eginik, hizkuntzaren historiaren alderdi franko jorratu behar da era honetako jardun bati ekiteko, baina nolanahi ere den, oraingo gure saio hau ez da bukaturik dagoen lan baten aurkezpena, ez da auzi baten hondarreko erabakia. Nafarroa Behereko idazki zaharrei begiraldi bat egin ondoren, ezaugarri nabarmen batzuen aurkezpena dakargu, ez osoa ezta behin betikoa ere.

Anakronikoak izateko arriskua genuke, XVI-XVIII. mendeetako goi-nafarrera zehazteko, gorago aipatu ditugun ezaugarriak bakarrik hartuko bagenitu aintzat. Denboran atzera egin eta testu zaharrak azterturik ikusiko dugunez, kontua lausoagoa da. Bateko, corpusa mugatua denez, testuek erakusten dituzten ezaugarriak ere mugatuak dira, esan nahi baita, ez dituzte orduko hizkerek zituzten berezitasun guztiak islatzen. Besteko, gaur egun goi-nafarrerazkotzat hartzen diren zenbait ezaugarri ez dira ageri lekukotasunetan; alegia, goi-nafarrera definitzeko erabili diren zenbait ezaugarri 1750 ondoren sortutako berrikuntzak dira. Esaterako, indikatibozko NOR-NORI-NORK saileko *-it-* pluralgilea egungo goi-nafarreraren ezaugarria izan arren, ez da sistematikoki agertzen XVIII. mendearen erdialdera arte; lehenago aztarnaren bat besterik ez dago eta eskualde batean bakarrik (ik. § 3.2.2.2.12). Gainera, zenbait testuk bi pluralgileak dituzte XVIII. mendearen erdialdean; Goizuetako sermoian, kasu (Reguero 2015b), *-i(n)-* erroko pluraleko bi adizki aurki daitezke: batek *-it-* plural-

gilea darama; besteak, aldiz, *-zki-*. Hortik, ordea, ez da segitzen Goizuetako sermoi hura goi-nafarrerazkoa ez denik edo Nafarroakoa ez den beste euskalki baten eraginik duenik. Aitzitik, dialekto horretan idatzitako sermoia dela pentsatzeko arrazoirik bada. Instrumentaleko aldaera apikariaz ere bada zer esanik, ez baita eremu geografiko osoan agertzen; eta testu zaharrek erakusten duten hedadurak ez dirudi gaurko bera denik (ik. § 3.2.1.10). Horrezaz gain, egun goi-nafarreraren ezaugarri esklusibotzat hartu ohi den bigarren pertsona singularreko *y-* ez da ageri testu arkaiko eta zaharretan; beti dira *ayz* eta *aut*. Ez dakigu berrikuntza noizkoa den zehazki, baina iduri luke XVIII. mendearen bigarren erdialdetik aurrera gertatua behar duela izan, ez lehenago. 1778ko Iturengo esaldi batean *bayaiz* 'bahaiz' agertzen da (Maiora 2011: 171), baina lehenago beti da *(h)ayz*.

Hortaz, Zuazok edo Caminok finkatutako ezaugarri batzuk ez badira sistematikoak XVIII. mende aurretik, zein dira goi-nafarrera arkaiko edo zaharra definitzeko balio diguten ezaugarri linguistikoak? Galderari erantzuna ematen hasi aurretik, gogora ditzagun Caminok (2009: 321) esandakoak:

> Hizkuntzaren baitan sistematikoenak diren ezaugarriak jotzen dira garrantzizkoenak dialektologian, berei aitortzen zaie garrantzi gehien dialektoak sailkatzean, baina ezin ahantzi dugu horren sistematikoak ez diren ezaugarri horiek ere mintzo baten edo dialekto baten atalak direla eta haren definitzaile direla; ezaugarri horiek espazio dialektala itxuratzen lagundu dute eta oraino ere itxuratzen laguntzen dute.

Usuenik, dialekto bat finkatzeko hizkuntza-ezaugarri esklusiboen sorta erabiltzen da, baina esklusiboez gain, badira dialektoa definitzen laguntzen duten beste ezaugarri batzuk, inguruko beste dialektoekin parteka ditzakeenak (Camino 2009: 349).

Hori dela eta, ondoko orrialdetan aztertuko ditugun ezaugarri guztiak ez dira goi-nafarreraren ezaugarri esklusiboak. Batzuk Lapurdiko eta Nafarroa Behereko hizkerekin partekatzen ditu, beste batzuk erdialdeko edo mendebaldeko hizkerekin egindako berrikuntza komunak dira eta, azkenik, goi-nafarreraren ezaugarri esklusiboak ere agertzen dira. Dena dela, guztiak dira goi-nafarrera arkaiko eta zaharra definitzen laguntzen dutenak. Era berean, dialekto guztietan edo gehienetan orokorrak diren —edo izan diren— ezaugarriak ere aztertu ditugu, beti ere ezaugarri horiek goi-nafarreraren kronologia aztertzeko balio badute.

Ondorioz, azterketa ez da deskribapen sinkronikoa izango, ardatza beti kronologia izango baita. Aztertuko ditugun ezaugarriak testuetan aurkitu ditugu; beraz, horietan ez den ezaugarririk ez dugu iruzkindu. Azterketan lekukotasunetako adibideak jaso eta laburduraz eman ditugu testuon erreferentziak (ik. § 5); esaldien kasuan, ordea, lekua eta urtea eman ditugu erreferentzia gisa. Ezaugarri batez dihardugula adibideak ematean, kronologikoki ematen saiatu gara. Bestalde, testu berriago batzuk ere baliatu ditugu, batez ere ezaugarrien kronologia egiteko. 1745-1750 bitarteko testu batzuk Eranskinean eman ditugu.[1254]

Halako lanetan ohi denez, hizkuntza-ezaugarrien azterketa lau zatitan bereizi dugu. Hasi, fonologiarekin hasiko gara eta bertan goi-nafarreraz gertatu diren zen-

---

[1254] Horiezaz gain, 1748ko sermoi argitaragabe bat ere erabili dugu. Testu hori Muruzabalgo sermoien artean dago Euskaltzaindiaren egoitzan, eta tesirako erabiltzeko baimena eskuratu dugu; ez, aldiz, argitaratzeko.

bait bilakabide fonologiko aztertuko ditugu (§ 3.1). Ondoren, morfologian agertzen diren ezaugarri nagusiekin segituko dugu (§ 3.2); jarraian, sintaxiari loturiko gai batzuk aztertuko ditugu (§ 3.3) eta, azkenik, hiztegian eta lexikoan goi-nafarrerak dituen ezaugarri nabarmenenak aurkeztuko ditugu (§ 3.4).

## 3.1. FONOLOGIA

Honako atal honetan, goi-nafarrera arkaiko eta zaharraren ezaugarri fonologikoak eta bilakabideak aztertuko ditugu; beti ere dialektalki edo historikoki garrantzia izan dezaketen hotsak izango ditugu mintzagai. Hala, bokalekin hasiko gara (§ 3.1.1), kontsonanteekin jarraitu (§ 3.1.2) eta azentuaz egindako ohar batzuekin amaituko dugu (§ 3.1.3). Azkenik, ondorioak jasoko ditugu (§ 3.1.4).

### 3.1.1. Bokalak

Gainerako dialekto historikoen antzo, goi-nafarrerak bost bokal ditu: *a*, *e*, *i*, *o* eta *u*. Goi-nafarrerako bokalek ez dute beste euskalkietan agertzen ez den berezitasun handirik, baina bada zer esanik. Hori dela eta, bokal soilekin gertatzen diren bilakabideak (§ 3.1.1.1), bokal luze eta bikoitzak (§ 3.1.1.2) diptongoak (§ 3.1.1.3), hiatoak (§ 3.1.1.4), sinkopak (§ 3.1.1.5) eta *-ale* bukaera duten hitzak (§ 3.1.1.6) ikusiko ditugu.

#### *3.1.1.1. Bokal soilak*

Bokal soilez den bezainbatez, euskaraz gertatzen den aldaketetarik bat da *e-* > *i-* bokal ixtea txistukari sabaikari baten aurretik (*FHV* § 2.7). Ezaugarria ez da sistematikoa eta, euskalkien arabera, hitz batzuek egiten dute, besteek ez.

Goi-nafarrerazko 1745 aurreko testuak kontuan hartzen baditugu, bilakabide hori Iruñetik ipar-mendebaldera egiten dela dirudi: *iche* 'etxe' (Serm1743-1) eta *ichera* (IsEr), baina *echera* dago Gipuzkoako Diputazioko alean eta xvii. mendeko kopia eskuizkribatuan (ik. § 2.2.19). Irungo Udaleko testuetan ere bi aldaerak ediren ditugu. Bestalde, *eche* mantentzen dute hegoalderago 1729ko sermoiak, Beriainek, Frantzisko Elizaldek, Obanosko bertsoek, Perotxegik eta 1748ko sermoiak.

Testu zaharretan agertzen ez diren arren, Mitxelenak (*FHV* § 2.7) goi-nafarrerazkotzat ditu *itxola* eta Oiartzungo goi-nafarrerazkotzat hartzen du *intxixu* (< *hechizo*). Aldiz, Mitxelenaren arabera, *estu* —*e*-rekin— dugu goi-nafarreraz, eta *estuena* dugu 1729ko sermoian.

Bilakabide horrezaz landara, hizkera batzuek aditzen partizipioetan *e-* > *i-* egin ez, eta hasierako *e-* mantendu dute: *ecusi* (OrreBer, JElGut, Serm1743-1 eta Serm1743-1) eta *egorceaz* (BeraGut). Aitzitik, *i-* hasiera dute beste testu batzuek: *icusi* (Sueskun, Ber*Meza*, Ber*Dot*, Serm1729 eta Serm1743-1), *ibildu* (Ber*Meza*), eta *ibili* (Irurita, 1660).

Bokal ixte hori partizipioez haratago doa, Mitxelenak (*FHV* § 2.5) erakusten duenez, *e-* > *i-* egiten da hitz hasieran, kontsonante aurretik, baldin hurrengo bokala itxia bada: *iguzquia* da *OEH*ren arabera (s.v. *eguzki*) Nafarroan Lizarragaren lanak agertu bitartean lekukotzen den aldaera. Guk Elizalderen dotrinan, Felipe IV.aren

omenezko bertsoan eta Obanosko bertsoetan aurkitu dugu aldaera hori. Dena dela, *OEH*k dioenaren kontrara, ez da Lizarraga Elkanokoa *eguzqui* aldaera erabiltzen lehena; 1745 aurretik *eguzqui*, behin bada ere, 1743ko bigarren sermoian agertzen da. Horrekin batera *iduqui* (Ber*Meza*, JElizaGut, Serm1729 eta El*Dot*) aldaera ere badago. Hain zuzen ere, 1745 aurretik *eduqui* behin bakarrik aurkitu dugu, 1565eko Eugiko esaldian. Autore berriagoek ere *iduqui* erabiltzen dute, besteak beste, Mendiburuk, Lizarraga Elkanokoak, Mikelestorenak eta Urizko eta Elizondoko dotrinek. Bestalde, Nafarroako hegoaldeko hizkera batzuetan hitz barruan *e-u* > *i-u* gertatu da: *ainguiru* (Serm1729 eta El*Dot*). Aldiz, *aingueru* dugu 1743ko sermoian, Beriainen liburuetan eta baita 1748ko sermoian ere.

Asimilazioez dihardugula, euskaraz ohikoa dira *a* eta *e* bokalen arteko asimilazioak gertatzea, hala nola *elkar* : *alkar*, *geza* : *gaza* (*FHV* § 2.9). Goi-nafarrerari dagokionez, bilakabide hori nabarmena da *arte* > *erte* adibidean: *ertetic* dugu dagoeneko XVI. mende bukaerako Aresoko otoitzetan, eta XVII. mende hasieran *ertean* dugu Orreagako Amari egindako bertsoan eta Beriainen dotrinan, ez ordea *Meza*n. Halere, ez da sistematikoki egiten: Aresoko otoitzetan bertan *artean* ere badago eta Elizaldek ere bietarikoak ditu. Halaber, *arte* dago Aldatzen 1609ko olerkian, XVII. mende hastapenetako katixima zatietan, 1626ko Leitzako apaizaren auzian, mende horren bukaerako Berako olagizonaren gutunetan, Joseph Elizalderen gutunetan eta 1743ko bi sermoietan. Era berean, goi-nafarreraz *a-a* > *e-a* disimilazioa gertatu da **(h)ark-(h)ar* > *elkar* bilakabidean: *helcarr* (Gorriti, 1554), *ercal* (Izkue, 1609; Ber*Dot*), *elcar* (Amendux, Izkue, 1609; El*Dot*). Geroago, Mikelestorenak, Mendiburuk eta Lizarraga Elkanokoak ere *elcar* erabiltzen dute.

Ia Nafarroa osokoa dela dirudi, *o-e* > *o-o* bilakabidea *oren* > *oron* adibidean. Hala agertzen da Amaiurko 1659ko esaldi batean eta 1729ko sermoian, eta *horon* darabil Beriainek. Aitzitik, *oren* dugu Berako olagizonaren gutunetan. Zaraitzun *oron* eta *odoi*[1255] ere badaude (Mitxelena 1967: 655); aldiz, Erronkaribarren *oren* bide dago (Mitxelena 1958b). Bilakabide bera bide dago *podore* (AresOtoi, Ber*Meza*, Ber*Dot*, El*Dot*, Serm1743-2) hitzean. Gainera, goi-nafarrerak ez du egin *o-o* > *e-o* aldaketa *ohortzi* > *ehortzi* hitzean, eta *ortzi* dugu Nafarroa osoan: *orçiric* (Amendux), *orci* (Ber*Meza*, Ber*Dot*, ObanosBer, Sanzberro), *orsi* (Zannetti), *orzi* (El*Dot*). Zaraitzu eta Erronkaribarren ere *orzi* dago, azken horretan bokal sudurkariarekin. Orobat *egunoro*, *egunoros egunorozco* & *egunorosco* (AresOtoi, Ber*Meza*, Ber*Dot*, Serm1729, El*Dot*) aldaeretan.

### *3.1.1.2. Bokal luzeak*

Euskara arkaiko zein zaharreko zenbait testutan bokal luzeak edo bikoitzak agertzen dira —grafikoki, bederen, hala islaturik daude—; batez ere erdialdeko eta mendebaldeko testuetan, izan ere, ekialdeko euskalkietan salbuespen dira bokal bikoitzak (Mounole & Lakarra 2018: 414-415). Mitxelenak erakutsi zuenez, lau bide daude bokal multzo hauek erdiesteko: (1) hitz elkarketa edo eratorpena; (2) bokalez amai-

[1255] Echaidek (1989: 37) Nafarroako bi lekutan bakarrik jaso zuen *odoi*: Zaraitzuko Espartzan eta Aranon.

tutako hitzari bokal berberaz hasten den kasu marka bat gehitzea; (3) aditz jokatu bati atzizkia gehitzea; (4) nolakotasun bereko bi bokalen arteko kontsonantea galtzea erro barruan (*FHV* § 5.1).

Nafarroari bagagozkio, toponimoek erakusten dutenez, Erdi Aroan Nafarroan baziren tarteko kontsonante bat galtzearen ondorioz sortutako bokal luzeak (Reguero 2012a, 2012b): *Zaarra* (Leire, 1055, 1085), *Arteeta* (Iratxe, 1087), *Insauspeeco* (Iratxe, 1203), *Ceea* (Iratxe, 1210), *Laarça* (Iratxe, 1218), *Beengoa* (Galar, XIII. mendea).

Testu luzeagoak agertzen direnerako, ordea, lehenago luzeak ziratekeen bokalak soildurik agertzen zaizkigu. XVI. menderako bokal bikoitz horiek bakandu zirela dirudi. Mende hartan, zaila egin zaigu erro barruan kontsonantea galdu izanaren ondorioz bokal bikoitzak ala bakunak dituzten adibideak aurkitzea; baina, nolanahi ere, beti bokal bakuneko adibideak ageri zaizkigu: *vellaco çarra* (Idozin, 1541), *vellaca çarra* (Idozin, 1558), *errumes çar* (Añorbe-Tirapu, 1546), *agot çarrori* (Iruñea, 1573), *cornudo çarra*, *adaburu çarra* (Iruñea, 1584), *mi luçe çarra* (Barasoain, 1593), *çarrac çarr aynchu* (Iraizotz, 1597). Mendearen akabukoak bide diren Aresoko otoiz zaharretan *len[…]*, *lenena* ditugu. Salbuespen gutxi ditugu testu nafarretan: Beriainek <ee> bakarrik erabiltzen du, baina beti *leen* eta *itcees* hitzetan; bigarrenaren kasuan 'iltzeez' *itsez* 'hitzez' adieratik bereizteko izan daiteke. Isastik jasotako errefrauetan *olaac* eta *beraago* ditu. Azkenik, *aalquegabeoc* agertzen da Iruritan 1660an.

Bokalez amaitzen den hitz bat nolakotasun bereko bokalez hasten den atzizki, kasu marka edo postposizioa gehitzean ere, nagusiki, bakandurik agertzen dira: besteak beste, *doctoren*, *erreguen*, *aydec* eta *adisquidec* dakartza Beriainek 1621eko liburuan, eta behin *corporaleec* liburu berean. Elizaldek 1735eko dotrinan *andrequi*, *jenden*, *fraiden*, *dezaquenac* dakartza; salbuespen gisa, hala ere, *virtuteen* eta *semeequi* ere badakartza. Arreko 1612ko koplan *amoranteen* dator, bokal bikoitzarekin, baina neurriagatik izan daiteke.

Horretan goi-nafarrera bat dator Lapurdiko, Nafarroa Behereko eta Zuberoako mintzoekin; Etxeparek halako soiltzeak bazituen, *emazten fabore*, eta Leizarragak ere bai: *lorek*, *regek*, etab. Aldiz, gipuzkera zaharrean oraindik bokal bikoitzak hobeto mantentzen ziren (Mounole & Gómez 2018: 495). Agian Gipuzkoatik duen gertutasunari zor zaio 1753ko Goizuetako sermoian (cf. Reguero 2015b) agertzen diren bokal bikoitzak: *gazteena*, *dulceetara*, *pobreen*, *umeen*, *amanteetan*, *amanteetatic ingratitudeen*. Egungo euskaran oinarrituz, Apalauzak (2012: 213) erakusten du Nafarroako ipar-mendebaldeko hizkeretan *zaar*, *zuur*, *maats* mantentzen direla.

### *3.1.1.3. Diptongoak*

Mitxelenak (*FHV* § 4) eta, ondotik, Lakarrak (2011) erakutsi duten bezala, denboran zenbat eta atzerago joan euskaraz diptongoak agertzeko joera gero eta txikiagoa da. Nolanahi ere, EBZean dagoeneko baziren beharbada diptongoak (ik. Lakarra 2011: 188), eta Erdi Aroan ere lekukotasunik bada (Reguero 2012b: 106-107).

Goi-nafarrera arkaikorako diptongoak ongi lekukotzen dira, eta XVII. mendetik aurrera monoptongazioen adibide ugari ditugu. Esanguratsuenetarik litzateke *ai* > *i* aldaketa: Beriainek *diteque* egiten du eta beranduago *diteque* dakarte Mikelestorenak eta Mendiburuk ere; baina 1745 aurreko gainerako testuetan *daiteque* (ElOl eta

El*Dot*) dugu. Lapurdin Axularrek eta Materrak ere *diteke* dakarte. Bortzirietan *biño* eta *zenbit* ditugu, biak Miguel Elizalderen eta izebaren arteko gutunetan.

Bestalde, inoiz *ai* > *a* gertatu da. Adibide zaharrena *zagu* (EraulGonb) da, 1564an; baina XVII. mendetik aurrera gehiagotan agertzen da: *bayçat*, *bayçazquit*, *ambat*, *beçanbates* (Ber*Meza*, Ber*Dot*), *beçanbates* (Aritzaleta, c.1602), *ambatéco* (EzkOl), *ambat* (ElOl), *ambeste* (Irun1721), *ambat* (ObanosBer). Aldiz, ez dute bilakabidearen arrastorik Bortzirietako Elizalderen gutunek —bertan *zait* baitugu— eta Elizalde muzkitarraren dotrinan *cizaigu* eta *ainberce* agertzen dira. Datarik ez duen Larrasoañako sermoian ere *aimbat* dago, eta *aimberce* dugu 1729ko sermoian eta *aimberze* 1743ko bietan eta 1748koan.

Oro har, *au* diptongoa bere horretan mantentzen bada ere, Beriainek **edun* aditzaren orainaldiko formetan *-au-* > *-ai-* egin du: *nayçula* baina *bainauçu* ere badakar; horrekin batera, Izarbeibarko 1650 inguruko esaldi batean ere *naizun* dago, eta *drayçudala* dugu Artaxoan 1607an. Nabarmentzekoa dirudi hiru lekukotasunak eremu bertsukoak izatea; dirudienez, *-au-* > *-ai-* bilakabidea hegoaldeko goi-nafarreraren hizkera bateko ezaugarria da.

Bestalde, Nafarroako erdigunean, Zaraitzun eta Erronkaribarren bezala, *au* > *a* egin da *Jangoico* (PNoster, EErrom; Urdotz, 1687; El*Dot*, Serm1743-1, Serm1743-2) adibidean. Aldiz, *au*-rekin txandaka ageri da 1729ko sermoian eta *-a*-dun adibideren bat dago Aresoko otoitzetan. Aitzitik, *au* mantentzen da goi-nafarreraren eremuko bazterreko Isastiren lekukotasunetan, Aresoko otoitzetan eta Joseph Elizalderen gutunetan. Hegoalderantz, ez da ageri berrikuntzarik Beriainen liburuetan eta XVII. mende hasierako katixima zatietan.

Bestalde, **eradun* eta *eduki*-ren adizkietan *-d-* > *-ø-* bilakabidea gertatua da eta, ondorioz, *d(e)rau-* eta *dau-* diptongoak ditugu. Halere, han-hemenka, *-d-* mantentzen duen fosilik bada: *haducat* (Bakedao, 1566).

Inoiz pluraleko lehen graduko erakusleetan *au* > *o* eta *au* > *ob* gertatu da hizkera batzuetan: *ohec* (AresOtoi, LeitzAuzi, Ber*Meza*, Ber*Dot*), *ohesas* (Ber*Meza*), *obec* (Serm1743-1, ObanosBer). Aldiz, beste hizkera batzuetan *au* > *eb* egin da: *ebec*, *ebetan* (El*Dot*), *ebec*, *guebec* (Serm1729). Adibide horietako batzuetan ikusten denez, diptongoko bigarren elementua, bokalerdia alegia, kontsonante bilakatzen da. Horren adibide dirateke *obec* 'hauek' eta *ebec* 'haiek' gisako erakusleak. Mitxelenak (*FHV* § 4.2) erakusten duenez, goi-nafarreraz badaude *u* bigarren elementuaren kontsonantizazio adibide gehiago: *abrera* 'aurrera' dute Mendiburuk eta Lizarragak, *lebri* 'leurri' eta *absarta* 'ausarta' azken horrek.

Bortzirietan, Berako olagizonaren gutunean *ai* > *ei* gertatu da *Jeincoac* eta *Yeincoac* adibideetan.

Horrezaz gain, *eu* diptongoa bere horretan mantentzen da eta, besteak beste, *neure*, *zeure* & *eure* gisako izenordainetan diptongoa ageri da goi-nafarrera arkaikoko lekukotasunetan. Kasu batzuetan, halere, monoptongazioek aski zaharrak dirudite, eta goi-nafarrera arkaikorako gertatu ziren; hala, **edutzi* > *eutzi* > *iutzi* > *utzi* bilakabidea goi-nafarrera arkaikorako gertatu da. *Utzi* ez da XVI. mendean maiz lekukotzen, baina *uçico* dugu 1554ko Etxauribarko Etxarriko esaldi batean, eta XVII. mendean *uci* (MElGut), *uzi* (Goizueta, 1633), *uçac* (Amaiur, 1659) ditugu. Salbuespen bakanik bada, baina Nafarroako ipar-mendebaldeko eskualdeetan: *juci*, *jutci* (AresOtoi) eta *yuiz* (JElGut), *idusten* (< *iuzten*;

Irun1721) ageri da. Ohart bedi hiru testuak Nafarroako bazterrekoak direla, ez erdigunekoak.

Bestalde, posesiboetan *eu* > *e* bilakatzen da, lekukotasun batzuetan behinik behin. XVI. mende bukaerako Aresoko otoitzetan *guere* (baita *gueure* ere) agertzen da, baina mende berean *heurea* eta *çeurea* (Arribe, 1564) eta *neure* dago ezkontza fedeetan. XVII. mendean, *zere* eta *nere* (BeraGut, JElGut) ditugu, baina mende bereko Beriainen testuetan, esaterako, diptongoa agertzen da. Dirudienez, beraz, geografikoki eremu zehatz batean —Gipuzkoarekin muga egiten duten Bortzirietan eta Basaburu Txikian— hedatu zen lehenik bilakabidea; XVIII. mendetik aurrera *nere* eta *zere* (Serm1743-1, Serm1743-2, Serm1748) agertzen dira, eta *cere* eta *nere* daude 1753ko Goizuetako sermoian (Reguero 2015b). Aurkitu ditugun adibide guztiak dira Iruñetik ipar-mendebaldekoak. Bilakabide horrek badu bere garrantzia, kontuan hartzen badugu aipatu eskualdeek muga egiten dutela Gipuzkoarekin, edo Gipuzkoatik gertu daudela, non posesiboan monoptongazioa indarrean den: Otxoa Arinek, adibidez, *neure* eta *geure* erabiltzen baditu ere, *nere* eta *gere* maiz dakartza dotrinan. Gipuzkera zaharrean, XVI. mendean idatzitako salmo misererean (Akesolo 1982) *nere* dago, nahiz eta *zeure* ere badagoen. Areago, bilakabidea **edun*-en adizkietara hedatzen da, eta gipuzkerazko lehen lekukotasunetan *estet*, *deçu* ditugu arestiko salmo misereretik bertatik hasita, *deu* 'du' ere badagoen arren. Laburbilduz, Nafarroako ipar-mendebaldeko hizkerek duten bilakabide hori Gipuzkoan ere, indar handiagoz, agertzen da.

Ez da maiz lekukotzen *ei* diptongoa, eta aipagarri da **edin*-en adizkietan duguna; izan ere, **-edi-* > *-ei-* > *-i-* bilakabidea aski zaharra dela dirudi. Goi-nafarrera zaharrerako *lite* (< **ledite*) 'liteque' erabiltzen du Beriainek. Nolanahi ere, diptongoaren aztarnak ditugu: *beitez* (FelBer), *baleitez*, *leiteque*, *ceitecela* (Serm1729).

Era berean, *eu* > *u* monotongazioa gertatu da *uskara* adibidean, eta aldaera hau darabilte Berako olagizonak eta Joseph Elizaldek Bortzirietan, 1729ko sermoiak eta Frantzisko Elizaldek 1735eko dotrinan. XIX. mendean aldaera monoptongoduna dugu Bertitzaranan (Ondarra 1989b). Aldiz, diptongoa mantentzen da Felipe Borboikoaren heriotzari buruzko kopletan: *euscarazco*. Beriainek ere *euscaras* darabil.

Orain arte ikusitako diptongoak beheranzkoak izan dira, eta horiek dira maizenik ageri direnak. Goranzko diptongoez den bezainbatez, ez da erraza testu zaharretan halakoak aurkitzea; badarik, bada gisa horretako diptongoen aztarnarik testuetan. Horien artean dago Orreagako 1617ko bertsoa; bertan, silaba kopurua erregularra bada, zenbait bokal bilkura —ez guztiak, baina— goranzko diptongo gisa ahoskatu beharko lirateke: *Orierriagan* (4 silaba), *gloria* (2 silaba), *Sandulariac* (4 silaba), *Jaincoac* (2 silaba) eta *benedictio* (4 silaba). Ezin jakin, halere, ahoskera islatzen ote duten ala estilistikagatik den. Gauza bera gertatzen da beste bertso eta koplekin ere. Esaterako, Ezkurraren 1609ko olerki sarituan azentua, oro har, azken-aurreko silaban dago (ik. beherago § 3.1.3); beraz, badirudi goranzko diptongoak ditugula ondoko adibideetan: *borondátea*, *múnduan*, *báqueac, cindúquean*, *viótçean*, *jáyncoa*.

Bestalde, horren ziurra izan ez arren, hitz hasierako *oa-* diptongoa izan litekeela, eta batzuetan *oa-* > *goa-* > *gua-* [gwa-] egin bide da. Ezaugarri aski zaharra da, XVI. mende amaierarako lekukotzen baita: *goaye* (Barasoain, 1593). XVII. mendean ere lekukotzen zaigu, *goaye* 'hoa' (Atarrabia, 1647) eta *goarcen*, *guarçen* (Ber*Dot*), baina *ohaye* (Ber*Meza*) ere bada, itxuraz hiatoarekin. XVIII. mendearen erdialdekoak dira *goarcabean*, *goatcean* (ObanosBer). Caminok (2009: 348) nafarreraren ezaugarri

bateratzaile ez-esklusibotzat du ezaugarri hori; zehazkiago «/wa/-ren aitzinean *g-* garatu izana».

### *3.1.1.4. Hiatoak*

Euskaraz zenbait bidetatik sortu dira hiatoak. Horietako bide bat izan da bokal artean zegoen kontsonantea galtzea (*FHV* § 5.1). Hego Euskal Herriko hizkeretan hasperena izan da bokal artean galdu den kontsonanteetarik bat. Hots hori galtzean nolakotasun desberdina duten bi bokal elkartu badira, sortutako hiatoa saihestu du goi-nafarrerak, hitz batzuetan bederen. Bilakabide hori ongien islatzen duen hitza *aho* > *ao* > *ago* da, zalantzarik gabe. Hain zuzen ere, XVII. mendetik aurrera beti ageri da aldaera hori; ordukoak dira honako adibideak: *agotic* (ElOl), *aguáren* (EzkOl), *agoa*, *iguesi* (IsEr), *ago* (EErrom), *agotic*, *agoan*, *agoas* (Ber*Meza*). Salbuespen gisa, *aubecotic* dugu Lekunberrin 1551n eta *aubeco* Iruñean 1535ean, baina bi kasuetan *aho* hitzetik eratorritako hitz elkartua da (< **aho+behe+ko*). Ez dago bilakabide horren adibide ugari, baina 1729ko sermoian *liguguende* dago, **lihu-*tik eratorria. Bestalde, dirudienez, Zaraitzun joera bera dago. Mitxelenak (1967: 662) bertakotzat ditu, besteak beste, ondokoak: *ago*, *añagu*, *begarri* 'beharri, belarri', *egun* 'ehun'. Echaidek (1989: 88) ere *ligo*/*ligu* jaso zuen Aezkoan, Esteribarren, Ultzaman, Atetzen eta Imotzen. Sail berean sar dezakegu Imarkoaingo koplan dagoen *begui*, 'behi' interpretatzen badugu, bederen.

Hiatoak saihesteko bilakabideen artean, beste bidea izan da bokal itxi baten eta ondoan duen bokal irekiaren artean kontsonante epentetiko bat tartekatzea; alegia *iB* > *iyB* eta *uB* > *ubB* bilakabidea. Aldaketa horren lehen lekukotasun nafarrak XVII. mendekoak dira. Halere, ipar-mendebaldeko hizkeretan bakarrik gertatzen da bilakabide hori. Bortzirietan Miguel Elizalderen eta honen izebaren arteko gutunetan ondoko adibideak ditugu: *diyo*, *baliyo*, *preziyuan*, *guziyei*, *duzuben*, *emayezube*, *salduba*, *dubela*; salbuespen gutxi batzuk badira, dena den: *cargua*, *escuan*. Eskualde berean, Berako olagizonak idatzitako gutunetan *escussatuba*, *contuban*, *duben* ditugu, eta urte batzuk beranduxeago Joseph Elizaldek idatzitako gutun batean *zubec* agertzen da. Bortzirietatik gertu, Irungo Udaleko agiriko euskarazko testuetan *nubenaq*, *basubeq*, *eginitubenaq*, *contubaq* ditugu. Badirudi Lapurdiko kostan ere bazirela halakoak hizkera mintzatuan (Lamikiz *et alii* 2013: 336).

Hiatoekin gertatzen den beste bilakabidea da lehen bokala *e* edo *o* denean ixtea, ondoko *a* bokal irekiaren eraginez. Hori dela eta, hizkera batzuetan *oa* > *ua* egiten da. Bilakabide horren lehen lekukotasuna XVII. mendekoa da eta, hain zuzen ere, Arreko 1612ko koplan agertzen da: *duaye* baina *doaye* ere bada kopla beraren beste bertsio batean. Mende haren akabuan, Miguel Elizalderen eta honen izebaren arteko gutunetan *arzequa*, *preziyua*, *astuaren* ditugu, besteak beste. Azken testu horretan, *ea* > *ia* bilakabidearen aztarnarik ere bada: *beriala*, baina *bereala* ere badago.

Bestalde, euskara zaharrean *egon* aditzaren *gaude*, *daude* eta *zaude* adizkietan diptongoa orokorra bada ere, dirudienez, goi-nafarrera arkaikoaren garaian gertatu da *-ao-* > *-au-* aldaketa. XVI. mendean testu bakar batean aurkitu ditugu aditz horren forma jokatuak, Aresoko otoitzetan hain zuzen ere; eta bertan *çaodena* eta *gaode* agertzen dira, baina *çaudena* ere badago. Apur bat beranduagokoa den Larrasoañako

1609ko esaldian *çaude* dugu. Geroko lekukotasunetan beti aurkitu dugu *-au-*. Era berean, orokorra izan da *-ae-* > *-e-* bilakabidea, batez ere *apez* eta *hameca* adibideetan, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean orokorrak baitira bi formak.

Azkenik, kasu bakan batzuetan, *-a*-z bukatzen diren hitzei bokalez hasitako kasu markak eranstean, bi bokalak mantentzen dira: *gauçaetan* (Iraizotz, 1597), *honrraetan*, *puntaen* (Serm1729). Frantzisko Elizaldek behin *bienaventuranzaen* dakar.

### *3.1.1.5. Sinkopak*

Goi-nafarreraren ezaugarriez mintzatzean aipatu ohi den ezaugarri nabarmenetarik bokal atonoaren galera izaten da: aferesia eta sinkopa (Zuazo 1998a: 215, 1998b: 10 eta Camino 2009: 349).

Zuazok (1998a: 215, 1998b: 10) sinkopa eta aferesiak batera aipatu arren, kronologia ezberdina dute bi gertakariek. Aferesiari dagokionez, testu zaharrenetan ez da halakorik agertzen (ik. § 3.2.2.2.19); sinkopa, ordea, ia lehen testuetarik agertzen da.

Testu zaharrenetan begiratzen badugu, sinkoparen lehen agerraldia XV. mendean aurkitzen dugu, Pater noster txikian: *apostru* (< **apostoru*). XVI. mendean *atra* (Iruñea, 1596) lekukotzen da. Hurrengo mendean ez da adibiderik falta: *orlaco* (Areso, 1608), *onlaco*, *atra*, baina *atera* (Altsasu/Burunda, c. 1648), *atra* (Badostain, 1606), *orlaco* (Urdotz), *otronçean*, *onlatan* (ElOl), *orla* (EErrom), *atra*, baina *atera* ere bai, (LeitzAuzi), *drechoaren* (BeraGut), *sobra* (MElGut). Beriainek ere sinkopadun adibide ugari ditu: *atra*, *dramanac*, *obrenac*, *bapedrac*, *onlaco*, *bedraci*, *braço*.

Antzeko egoera dugu XVIII. mendean: *atraceco*, *abrax*, *amartaric*, *bedraciac*, *iolatreco* eta, agian, *iblico* (Serm1729), *atraceco*, *atra*, *icusco*, *bedraci*, *libru*, baina orrialde berean *liburu*, *dramanari* (El*Dot*).

Laburbilduz, beraz, sinkopak Nafarroako ia eremu osoa hartzen du, Erronkaribar eta Zaraitzu barne, eta ez bide du azpi-aldaerak bereizteko balio. Gainera, zaharra den ezaugarria da, XV. menderako lekukotzen baita.

Sinkopak direla eta, aipamen berezia merezi dute **eradun*-en adizkiek. Nafarroan XVII. mendetik aurrera *derau-* eta *drau-* bi aldaerak agertzen dira, baina badirudi banaketa geografikoa dutela. Sinkopadunak, nagusiki, Nafarroako erdi-hegoaldean agertzen dira: Beriainen idatzietan eta 1609ko olerkietan beti sinkopadunak ditugu eta, gainera, prozesuetako esaldietan *estrauco* (Larrasoaña, 1606), *drayçudala* (Artaxoa, 1607) eta *draut* (Etxauri, 1596) ageri dira. Nafarroako iparraldeko lekukotasunetan, ordea, sinkoparik gabeko aldaera kausitzen dugu: *deraut* (Gorriti, 1554), *derauec* (Lesaka, 1609), *derauçu*, *derauçue* (Ezkurra, 1596). Ezkontza fedeetan *derauçut* agertzen da Arizkunen, Beorburun, Olatzagutian, Bakedaon, Agoitzen; aldiz, *drauçut* Zufian eta *draudaçut* Espartzan.

### *3.1.1.6. Maileguetako* -ale *bukaerakoa*

Caminok (2003b: 79) aurkezten dituen hegoaldeko goi-nafarreraren ekialdeko hizkuntza ezaugarri batzuen artean dago, besteak beste, erdialdeko eta mendebaldeko hizkeretan *-l*-z bukatzen diren maileguetan *-e* protetikoa erantsi eta *-le* egitea. Ca-

minok (*ibid.*) ezaugarriaren eremua honela zehazten du: Beriainen lanak, Gesalatz, Goñerri, Oltza, Izarbeibar, Elortzibargo Zabalegiko predikua, Eguesibar, Artzibar, Erroibar eta Aezkoa. Aldiz, *-l* dago ipar Esteribarren, Baztanen, Bortzirietan, Sakana erdialdean, Arakilen, Larraunen, Basaburuan, Ultzaman, Atetzen eta Txulapainen.

Testu zaharren egoerari dagokionez, Leitzako apaizaren auzian *executoriale* eta *officiale* ditugu, nahiz eta geografikoki ez den hegoaldekoa. Esan dugun bezala, Beriainek *-ale* du, besteak beste ondoko adibideetan ikusten denez: *animale*, *oficiale*, *mortale*, *caudale*. 1729ko sermoian *animale* eta *mortale* ditugu, eta Elizalderen dotrinan *originaleric*, *capitaleac*, *mortale*, *veniale*, *espirituale*, *sobrenaturale* ditugu. Toponimian ere agertzen da laginik: *Calvoren corrale sarraldea* jaso du Eslaba aldean Salaberrik (2015b).

Nafarroatik kanpo, Araban *Ni naiz Marsellaco naturale* dakar Lazarragak eta Landuccik hiztegian *arbole*, *mortale*, *carnale* jaso zituen. Beraz, Caminok (2003b: 79) ekialdekotzat hartu arren, garai zaharragoetan ezaugarriak hedadura zabalagoa zuela erakusten dute Arabako euskaraz idatzi lekukotasunek.

### 3.1.2. Kontsonanteak

Bokalak ikusi ondoren, kontsonanteekin segituko dugu. Hala, hasperenarekin (§ 3.1.2.1) hasiko gara eta jarraian herskariekin (§ 3.1.2.2), txistukariekin (§ 3.1.2.3), sudurkariekin (§ 3.1.2.4), **j-* zaharraren ahoskerarekin (§ 3.1.2.5), sabaikariekin (§ 3.1.2.6) eta kontsonante multzoekin (§ 3.1.2.7) loturiko ezaugarriak aztertuko ditugu.

#### *3.1.2.1. Hasperena*

Erdi Aroko lekukotasun zaharrek erakusten dutenez, hasperena orokorra izan zen antzina (Reguero 2012b: 115-118), eta Pirinioez hegoaldeko dialektoek galdu egin zuten. Mitxelenak (*FHV* § 11.3) iradoki zuen hasperena Nafarroan hasi zela galtzen, euskarak hasperenik ez zuen aragoiera erromantzearekin zeukan kontaktuaren ondorioz. Halaber, galera XI. menderako burutua zela dio. Edonola ere, Hego Euskal Herrian uste izan dena baino gehiago iraun zuen hasperenak (Mounole & Lakarra 2018: 417).

Beste lan batzuetan erakusten ahalegindu garenez (cf. Reguero 2012b, 2013b; ik., halaber, Salaberri 2018: 322-324), Nafarroako Erdi Aroko lekukotasunetan ez da hasperenik ageri XIII. mendetik aurrera. Orduko lekukotasunak azterturik ikusi genuen Nafarroako erdialde-ekialdean has zitekeela galera. Aldiz, hasperenaren aztarnak ediren genituen iparraldean (Orreagan) eta mendebaldean (Iratxen). Besteak beste, *sarohe* eta *çaharra* ditugu 1284an Orreagan; Iratxekoak dira, ordea, ondokoak: *Eleicauehea* (XI. m.), *Yhidia* (1066), *Erret ihera* (1150). XIII. mendetik aurrera, ordea, ez da hasperenik agertzen Iratxeko lekukotasunetan.

Berrikiago, Manterolak (2015: 506 eta hh) erakutsi du Nafarroako XVII. mendeko testu batzuetako <h>-ek zenbaitetan hasperena isla zezaketela; areago, Beriainen lanetako <h> batzuk hasperentzat hartu ditu, batez ere *ohec*, *orihec* eta *ayhec* erakusleetan.

Ondorioz, Erdi Aroaz haratago, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean hasperenaren aztarnak aurki litezkeela dirudi, baina galtze bidean (eta leku askotan galdurik) legoke ordurako hasperena.

Manterolaren proposamenari jarraituz eta xvi. eta xvii. mendeetako lekukotasunei begiratuz, ikus dezagun eskualdeka zer gertatzen den.

Erdi Aroan bezala, xvi. mendean badirudi hasperena Nafarroako ertzetan gordetzen dela: Uitziko ezkontza fedean *hic*, *hau* eta *horren*, baina *eure* ditugu, eta bertatik ez horren urrun, Arriben ere *hi*, *hayz* eta *heurea* ditugu 1564an, itxuraz hasperenarekin. Hegoalderago, Ameskoan *lehen*, *haducat* eta *haiz* adibideek hasperena erakuts lezakete. Agoitzaldeko Urrozen agertzen den *quexassen den ha* (Urroz, 1582) adibidean erakusle hasperenduna dugu. Esteribarren ere antzeko egoera dugu: *nahi*, *heure*, *hiçac* (Eugi, 1565), *bihar* (Larrasoaña, 1579), baina *jonai* (Eugi, 1566), *andi*, *ori* (Larrasoaña, 1606). Ez dirudi <h> agertzea kontu grafiko hutsa denik; izan ere, hasperena izan dezaketen hitzetan eta testuinguruetan agertzen da.[1256]

Ez dirudi hasperena zegoenik Bortzirietan, Ollaranen, Iruñerrian eta Orbaibarren. Lekukotasunetan behintzat ez dugu aztarnarik aurkitu. 1609ko olerkietan eta Isastiren testuetan eta Aresoko otoitz zaharretan ere ez da halakorik.

Bistan denez, goi-nafarrerazko lehen lekukotasunak agertzerako hasperena galtzen ari den ezaugarria da; eta, agidanean, galera prozesu mantsoa izan zen. Hasi, Erdi Aroan hasi zen, baina ez zen erabat galdu xvii. mendera arte.

Hasperenaren galeraren kronologia erlatiborako interesgarri izan daiteke Nafarroako Foru Orokorrean eta Matxin Zalbaren gutunean agertzen den *abari* hitza. *Afari* hitzarentzat **(g)au+hari* etimologia proposatu izan da (ik. Lakarra 2011); beraz, *abari* azaltzeko, badirudi *h-* > *ø* bilakabidea **wh*/*ßh* > *-f-* baino lehenago gertatu zela: **(g)au+hari* > **(g)auari* > *abari*.

### *3.1.2.2. Herskariak*

Mitxelenak (*FHV* § 12.11) eta, lehenago, Martinetek (1955) erakutsi zuten latinetik hartutako maileguetan hitz hasierako herskari ahoskabeak ahostun egin zirela euskaraz. Ondoren, ordea, hizkera batzuek hasierako herskaria berriro ahoskabetu zuten: *turrem* > *dorre* > *torre*; *pacem* > *bake* > *pake*.

Testu zaharrei begiratzen badiegu, ikusiko dugu goi-nafarreraz ez dela ahoskabetzerik, eta testu arkaikoetarik ahostundunen adibide ugari aurki dezakegu: *baradiçu* agertzen da Pater noster txikian,[1257] *becatu* eta honen eratorriak ditugu dialektoaren eremu osoan: *becataria* (Ezkurra, 1569), *becatarioy* (AresOtoi), *becatuén* (EzkOl), *becatorec* (AldOl), *becatariengatic* (NafKat), *becatu* (Beriain, El*Dot*, Serm1729), *becatorea* (Serm1743-1 eta Serm1743-2). Bestalde, Amenduxen olerkian *garitates* eta *baquea* ditugu, eta azken aldaera hori dute Beriainek eta Elizaldek ere. Altsasu eta Burundaren arteko 1648 inguruko auzi-agirian *baquean* dugu. xvii. mendearen hastapenetan ere *boçic* (AldOl) lekukotzen da. Beriainek *galcina* (< gazt. *calcina*) eta *gaz-*

---

[1256] *Monumenta Linguae Vasconum 5* proiektuaren 2. jardunaldietan (2018/12/18), Patxi Salaberri Zaratiegik «Zenbait hizkuntza gertakariren datatzeaz. Onomastikak ematen digun laguntza» eskainitako saioan Baztango xvi. mendeko zenbait toponimo erakutsi zituen, horietarik batzuek hasperena zuten bokal artean; hauxek Salaberrik eskainitako adibidetarik batzuk: *Arreche vehere* (Erratzu, 1540), *Varace çaharra*, *Vehere* (Almandoz, 1540), *Vehereco echea* (Berroeta, 1539), *Xaharrena* (Elizondo, 1538).

[1257] Arroitzen 1330ean *Martin Periz Uaradisu* eta *Toda Badariso* agertzen dira (Carrasco 1973: 254).

*tigatu* ere baditu. Bestalde, *butzu* dago 1735eko Elizalderen dotrinan eta *butzuan* Obanosko bertsoetan. Bertso horietan bertan *vozturic* eta *voztu* ere agertzen dira. Mitxelenak (*FHV* § 12.11) goi-nafarrerazkotzat dakartza *dermio* eta Foru Nagusian agertzen den *guirisellu* ere. 1781ean Zubietan kantatu zen bertsoan *gombersacioan* agertzen da (Reguero argitaratzear-2). Mailegu berriagoetan, ordea, ahoskabea mantentzen da: *castigatuco* (Ber*Meza*, El*Dot*), *castigu*, *castigacen*, *castiguac* (Urdotz, 1687), *castigoa* (Ber*Dot*, El*Dot*, ObanosBer), *peretençia* (PNoster), *podore* (AresOtoi, Ber*Meza*, Ber*Dot*, El*Dot*, Serm1743-2).

Hala eta guztiz ere, zenbait lekukotasunetan ahoskabetzea gertatu da; hain zuzen ere, Irañetak 1549an bidalitako gutunean *parca* agertzen da, Zannettik 1614an jasotako kredoan *pecatu* eta *parcamentuan* ditugu eta Isastiren errefrauetan *paque* dugu. Bestalde, Olatzagutian *vorssa* (EzkonOlatz) dugun arren, Gorritin *porcha* (Gorriti, 1554) dugu ahoskabearekin; dena den, ez dakigu biak hitz beraren aldaerak diren.

Mailegu horiezaz landara, ahostuna dugu gainerateko euskalkiek ahoskabea duten zenbait kasutan; horren adibide nagusia *guendu* 'kendu' dugu: *guenzera* (FelBer), *guençen* (Serm1743-1), *guençeco* (Serm1743-2), *guendu*, *guen* (Ber*Meza*). Zaraitzun ere *guendu* dago; *gentu* erabiltzen zen Erronkaribarren. Hala ere, *quencen* dugu 1729ko sermoian eta Elizalderen dotrinan; eta beranduago *quendu* dakar Orrioko 1750eko eliza-agindUaren itzulpenak eta *quendu* Goizuetako sermoiak (Reguero 2015b).

*OEH*n (s.v. *kendu*) *gendu* aldaera hegoaldeko goi-nafarrerazkoa dela esaten da. Nolanahi ere, adibideetan ikusi dugunez, Elizalde gesalaztarrak, hegoaldeko mintzoan idatzi arren, ez du ahostuna egiten; aldiz, hegoaldeko mintzo garbia ez, eta iparraldeko goi-nafarreraren eitea duen 1743ko sermoian agertzen da. Beraz, hegoaldeko goi-nafarreraren ezaugarria baino, badirudi Nafarroako erdiguneko eta ipar-ekialdeko mintzoek izan duten joera dela. Beharbada, *gendu* aditzarekin batera aipa daitezke Atarrabiako 1647ko esaldi batean agertzen den *vitz* 'piztu' eta 1729ko sermoian dagoen *bisteco* 'pizteko'; hala ere, Mitxelenak (*FHV* § 12.12) iradoki zuen bezala *bizi* hitzetik erlazionaturik badago, adibide horietan ahostuna mantendu da, eta beste hizkerek ahoskabetu dute.

Hitz hasieraz gain, ozen ondotik ere ahostun egiten ohi da: *sandu* aldaera nafar orokorraz gain, *guendozque* 'gentozke' dakar Imarkoaingo koplak. Ezaugarri hau Nafarroan Zaraitzura ere hedatzen da (Mitxelena 1967: 662-663): *abendu* (erronkarieraz *abentu*), *boronde* (erronkarieraz *boronte*). Dena den, gaztelaniazko *-miento* atzizkiaren euskarazko ordaina *-mentu* ahoskabeduna da nagusi nafarreraz, salbu eta Baztanen (ik. § 3.2.1.18).

Horrezaz landara, Mitxelenak (*FHV* § 14.10) erakutsi bezala, euskaraz herskari eta txistukarien arteko txandakatzeak aurki daitezke; batez ere, hitz hasieran. Mitxelenak ondoko adibideak eman zituen, besteak beste: *sapar* : *gapar*; *zilbor* : *gilbor*; *zima* : *kima, k(h)uma*; *zirzill* : *kilker*, *kirkil*, *kirkir*; *kiskali* : *suskuldu*. Horietan, zaharragoak dira, oro har, herskaridunak. Mitxelenak (*ibid*. eta *FHV* § 10.6) azaltzen duen bezala, asimilazio adierazgarriaren eta ondoko desabaikaritzearen adibideak dira. Emandako zerrenda horretan agertzen diren goi-nafarrerazko adibide guztiak —hala nola *bilgor*, *kuma*, *kiskali*— herskaridunak dira.

Herskarien txandaketarekin jarraituz, bada beste txandakatze bat testu nafarretan: *bekain* : *bezain*, *bekala* : *bezala*. Mitxelenak (*FHV* § 14.10) *bekain* 'bezain' eta *bekala*

'bezala' hegoaldeko goi-nafarrerazkotzat eta erronkarierazkotzat ditu. Halere, testu zaharrenetan *becain* behin bakarrik aurkitu dugu, eta 1609ko Ezkurraren olerki sarituan dago. Halaber, *becambates* 'bezainbatez' du Beriainek (behin *Meza*n eta zenbaitetan dotrinan).

Amaitzeko, herskariez dihardugula, XVIII. mendearen erdialdetik aurrera bokal arteko ahostunak galtzeko joera indartsu ageri da. Lehenagoko testuetan ez da halakorik aurkitzen erraza, eta lehen adibibideak 1729ko sermoian ediren ditzakegu: *veira*, *ai zagun*, *eiten*, *beiratus*. Elizaldek ere badu halako adibiderik: *beyra*, *galdeiten*, *eyteco*, *eynen*, *nausietan*, *guticoat*. Aurkitutako aurreneko adibideak hegoaldeko goi-nafarreran agertu badira ere, ez da bertako ezaugarri esklusibotzat hartzeko arrazoirik. Aldiz, lehen goi-nafarrera modernoa goi-nafarrera zaharretik bereizteko ezaugarritzat har daiteke.

### *3.1.2.3. Txistukariak*

Txistukariez den bezainbatez, oro har, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean bizkarkaria eta apikaria ongi bereizten dira; halere, zenbaitetan igurzkariak apikariaren alde neutralizatzen dira herskari aurretik, baina inoiz ez sistematikoki: *cisquioten* (Ber*Meza*, Ber*Dot*), baina *cizquigun* (Ber*Meza*), *gaystoa* (Lesaka, 1626), *gaysto*, *gaystoa* (Areso, 1608), *egosten*, *esta* baina *badauzqui*, *daquizqui* (Urdotz, 1687), *estaquitenei*, *emaste*, *gaistoei*, *citusten*, *ecitusten, estaquienari*, *estu*, baina *eztu* (bi aldiz bakarrik) eta *ozten* (El*Dot*). Edonola ere, kontu grafikoa izan daiteke; Mujikak (2002: 199-201) azaltzen duenez, Lapurdiko kostako autoreek, Oihenartek eta Pouvreauk, besteak beste, halako nahasteak dituzte, eta ez bide da, beti behintzat, fonologiak eragindako nahastea.

Hala ere guztiz ere, hitz amaieran badugu apikariaren aldeko neutralizazioa eta horretan sistematikoen instrumentaleko atzizkiarekin gertatu bide da (cf. § 3.2.1.10).

Txistukariak aztertzeko orduan oztopo izan da euskarak berandura arte ez eduki izana berezko grafia sistemarik. Gabezia hori dela eta, testu zaharretan maiz ez dira grafikoki afrikatuak igurzkarietatik bereizten.

Hala ere guztiz ere, testu zaharretan aurki daiteke afrikatuak islatzeko saiakerarik; eta horiek interesgarri izan litezke ozen ondotik txistukaria afrikatua ala igurzkaria den jakiteko; eta, irudiz, autoreek ez dute berdin jokatu ozena *l*, *n* edo *r* denean. Mugikak (2002: 221) dakarrenez, Aranbillaga bitarteko (1684) «lapurtar gehienek, nafarrek eta zubereraren ingurukoek» igurzkaria erabiltzen dute hiru ozen horien aurretik, bai maileguetan, bai euskal erroko hitzetan bai hitz elkartuetan; afrikatua ager daiteke *r* ondoren euskal erroko hitzetan. Aldiz, Etxeberri Ziburukoak, Axularrek eta Pouvreauk afrikatuaren aldeko joera handiagoa dute batez ere *n* eta *r*-ren aurretik. Aranbillagaz geroztik, afrikatua erabilerak aurrera egiten du.

Mitxelenak (*FHV* § 14.6) erakusten duenez, gipuzkeran, bizkaieran eta goi-nafarrerazko hizkera batzuetan *n* eta *l* ondotik, eta neurri txikiagoan *r* ondotik, txistukaria neutralizatu eta afrikatu egiten dute. Aldiz, zubererak ez du sistematikoki egiten. Araban, Landucci aintzat hartuta, erakusten du afrikatuak sistematikoki bereizten dituela bokal artean, baina ozen ondoren inoiz ez dituela afrikatuetarako darabiltzan digrafoak erabiltzen. Hortik ateratzen du Arabako euskarak ozen ondotik igurzkari egiten zuela. Zuazok ere (2008: 190) erdialdeko hizkeren berrikuntzatzat dakar ozen ondoren afrikatu egitea.

Goi-nafarrera zahar eta arkaikoan ez dugu Landuccik bezala afrikatuak sistematikoki bereizten dituen autorerik; bada, ordea, bere osotasunean egin ez arren, afrikatuak islatzen saiatzen denik, hala nola Beriainek afrikatuak markatzen ditu, beti ez bada ere askotan. Testuinguruari begiratuz gero, afrikatuak bokal artean eta hitz amaieran markatzen ditu, inoiz ez ozen ondotik, besteak beste, *eracutsi*, *erdetsi*, *aytcetic*, *viotzean*, *otoytz*, baina *orzegun*, *borz*, *cerzas*, *enzuten*, *minza* (Ber*Meza*). Beraz, ondoriozta liteke ozen ondoren igurzkari zela orduko goi-nafarreraren eremu batean bederen. Beriainengan salbuespen bakarra aurkitu dugu: *artçayec* dakar dotrinan. Elizaldek ere ez du ozen ondokorik markatzen; bai, ordea, beste testuinguruetan: *gurutce*, *gaitzazu*, *etsayetatic*, baina *erorzera*, *orzi*, *enzutea*, *minzazen*.

Nolanahi ere, badirudi Iruñea inguruan afrikatua egiten zela *r* eta *l* ozenen ondoan. 1609ko olerkietan ondoko adibideak ditugu: *iltçen* (EzkOl), *gabiltçque*, *ultçituric*, *saltçeagatic*, *viurtçen* (ElOl), *bertçe*, *ortçegunean*, *bertçea* (AldOl). Halaber, ziurrenik eremu bertsuan, *erortzen* (FelBer) dugu, baina testu berean *guenzera* eta *berzec* ere baditugu.

Txistukarien azpiatala amaitzeko, testuetan aurkitu ditugun bi disimilazio aipatuko ditugu. Batetik, aipatzekoa da 1609ko olerkietan agertzen dena; hain zuzen ere, **ezan* laguntzailearen adizkietan *z - z* > *g - z* disimilazioa gertatu da: *egáçu* (< *ezazu*). Mitxelenak (*FHV* § 14.8) erakusten duenez, disimilazio bera du, besteak beste, Leizarragak: *ianagaçue*. 1609ko olerkiez landara, 1750 aurreko Nafarroako testuetan ez da halako adibide gehiagorik. Bestetik, Gipuzkoarekin muga egiten duten Areso eta Leitzako lekukotasun zaharretako adizki batzuetan *z - z* > *ø - z* disimilazioa gertatu da: *jazquiguzu* < **izazkiguzu* dago Aresoko otoitzetan eta *eztiazola* < **ez diazazola* Leitzako 1626ko lekukotasunean.

### *3.1.2.4. Sudurkariak*

Sudurkariei gagozkielarik, dialektalki interesgarria da *n*-rekin gertatzen dena. Ezagun denez, bokal arteko *-*n*- zaharra Erdi Arorako galdurik zen (Reguero 2012b: 113); halere, dialektoek ezberdin jokatu dute zenbait kasutan. Jarraian goi-nafarreraz bokal arteko -*n*-aren galeraren ondoren gertatutako zenbait bilakabide ikusiko ditugu.

Mitxelenak (*FHV* § 7.5) erakutsi zuenez, gipuzkeran eta goi-nafarreran *-*ani* > -*ai* gertatu da, eta *arrai*, *artzai* eta *usai* gisakoak dituzte dialektook. 1745 aurretik egoera zein den jakiten ez da erraza, adibide gutxi baitiitugu: *arzayari* (Otsagabia, 1598; ik., gainera, Mitxelena 1967: 661), *mandazaya* (IsMan), *arçayey* (Ber*Meza*) eta *artçayec* (Ber*Dot*), *mandazay* eta *mandazañaquin* (BeraGut), *tripazayac* (Leitza, 1677), *arzayac* (ObanosBer). Adibide askorik izan ez arren, pentsatzekoa dirudi goi-nafarreraren eremu handi batean -*ai* bukaera dagoela. Aitzitik, Baztan eta Bortziriak Nafarroa Beherearekin eta Lapurdirekin batera doaz horretan, Mitxelenak (*ibid.*) bertakotzat ematen baititu *arrain*, *usain* eta *artzain* aldaerak; hain zuzen ere, 1750eko Baztango eliza-aginduan *arzainaren* agertzen da (Reguero 2019). Gainera, Berako olagizonaren gutunetan *mandazañaquin* agertzen da, nahiz eta *mandazay* ere badagoen. Lapurdin Materrak *arçain* dauka, *artzaina*, *usain* eta *arrain* Axularrek eta Leizarragak; ekialderago, Etxeparek *arraynac* du, Lopezek Alfontsa Rodriguezen dotrinaren itzulpenean *arrain* eta *artzaiñ* & *arzaiñ* dakartza eta Belapeirek *artzain*. Gipuzkoan Otxoa Arinek

*usaia* dakar eta Irazustak *usai eguitea*. Araban ere, Landuccik *arraya* eta *usay* & *ussaya* ditu eta Lazarragak ere *arçai* eta *array*. Ondoko mapan ikus daiteke bilakabidearen banaketa geografikoa Nafarroan:




**8. mapa**

**-ani* bukaeraren bilakabideak Nafarroan

Aurrekoarekin batera, **-ana* zaharrarekin antzeko egoera dugu. Mitxelenak (*FHV* § 7.6) gipuzkerazkotzat eta goi-nafarrerazkotzat hartzen du *gazta* (< **gaztana*) aldaera; aldiz, Baztanen Nafarroa Behereko eta Lapurdiko aldaera berbera dugu, *gasna* alegia. Areago, testu zaharretan ikus dezakegunez, Bortzirietan ere *gasna* dugu Miguel Elizalderen eta honen izebaren arteko gutunetan. *Gasta* dugu Von Harffen hiztegian eta *gazta* Isastiren errefrauetan. Goi-nafarreran 1745 aurretik lekukotu ez arren, *orga* goi-nafarrerazkotzat, lapurterazkotzat eta behe-nafarrerakotzat dakar Mitxelenak (*FHV* § 7.6).

Horrezaz gain, **-ini* zaharra dela eta, Mitxelenak (*FHV* § 7.7) goi-nafarrerazkotzat eta gipuzkerazkotzat zuen *min(-gain)*; baina, dirudienez, hitz elkartuez landara *mi* da goi-nafarrerazko aldaera zaharra: *mi luçe çarra* (Barasoain, 1593), *miac* (IsEr),[1258] *mia* (Ber*Meza*, ObanosBer), *miarem* (E § 5.1). Zaraitzun ere *mi* da bertako forma (Mitxelena 1967: 654).

Halaber, interesgarri da maileguetako **-(t)ione* amaierarekin gertatzen dena. Oro har, *-(z)io* egiten da Nafarroa gehienean: *jeneracio* (Ezkaroze, 1590), *opinió* (EErrom), *oracio* (Beriain, JElGut, El*Dot*, Serm1729), *tentacio* (AresOtoi, Ber*Meza*, Ber*Dot*, El*Dot*), *barcacio* (AresOtoi, Beriain, Elizalde), *resurrecio* (AresOtoi, Ber*Meza*, Ber*Dot*), *erresurrecio* (Ber*Meza*, Ber*Dot*, El*Dot*), *bedeicio* (Ber*Dot*), *obligacio* (Ber*Meza*, Ber*Dot*, El*Dot*, Serm1729). Nolanahi ere, Nafarroako iparraldean *-(z)ione* ageri da. Hain zuzen ere, *dispossicionetan* eta *obligacione* datoz Berako olagizonaren gutunetan, eta Esteribarko Larrasoañako 1606ko lekukotasunean *pretensione*

[1258] Halere, *mingañac* dakar L bertsioak.

eta *opinione* ditugu, *condiçio* eta *opinio* adibideekin batera. xviii. mendeko lehen erdikoa den Larrasoañako sermoi data gabean *-zio* eta *-zione*, bi aldaerak agertzen dira: *porcione*, *aficionerequi* baina *admiracionrequi*, *obligacio*. 1750eko eliza-aginduaren Baztango bi aldaeretan ere *-ione* dugu: *comunicazionearen*, *accione*, *pretensionea*, *invencione*. Hegoalderago, 1750ean Orrion *diversione* eta *funcionetan* ditugu. Bestalde, **-one* > *-oe* > *-obe* —*sermobe*, *razobe*, *leobe* gisakoetan dugun bilakabidea— xviii. mendearen bigarren erdialdetik aurrera lekukotzen da Nafarroako ipar-mendebaldeko zenbait hizkeratan.




**9. mapa**

Latinezko *-tione* bukaeradun hitzen banaketa Nafarroan

Aldaketa sistematiko horri loturik, badira aipamen berezia behar duten hitzak; esate baterako, lat. *ratione* hitzetik etorrita *arrazio* dugu hegoaldeko goi-nafarreran: *arracioric* (Etxauri, 1598), *arracio(-)* (Ber*Meza*, Serm1729, El*Dot*). Aldaera horren aurreko egoera bide da Muruzabalgo 1625eko *arraçeo* (*arraçeonac* 'arrazeo onak' dator jatorrizkoan). Zaraitzun ere *arrazio* dago —Echaidek (1989) egindako galdeketetan *arraziorik* jaso zuen Itzaltzun eta Jaurrietan; aldiz, *arrazoirik* Espartzan—. Caminok (2003b: 69) hegoaldeko goi-nafarreraren ezaugarri bateratzailetzat aurkezten du **-one* > *-oe* > *-oi* > *-io* bokalen azken metatesia.

Iparraldeko goi-nafarreraz idatzitako lekukotasun zaharretan gutxiagotan ageri da lat. *ratio*-tik datorren euskarazko ordaina; edonola ere, bada laginik. Leitzako 1626ko agirietako batean *razoe* agertzen da, baina *arrazoin* dugu Baztango 1750eko eliza-aginduetan; aldiz, Goizuetako 1753ko sermoian *arrazoi* agertzen da.

Beste aipamen berezi bat merezi du *pasio* hitzak. Dagoeneko Mitxelenak (*FHV* § 7.8) azaltzen duenez, Lizarraga Elkanokoak *barkazio* eta *orazio* erabiltzen ditu, baina *pasio* eta *pasione* darabiltza, bi aldaerak. Bi horien esanahia, ordea, ez da berbera: lehena Jesukristok bizi izandakoa azaltzeko erabiltzen du Lizarraga Elkanokoak eta bigarrena 'afecto desordenado' esanahia adierazteko. Bereizketa hori zaharragoa bide da, eta Elizaldek ere 1735ean banaketa bera du. Behin erabiltzen du *pasio* Jesukristok bizi izandakoa islatzeko: *sinestacea pasatu zuela pasio eta eriozea gure salvacea-*

*gatic*. Gainerakoetan *pasione* erabiltzen du: *Gal. Cer dire pasioneac? Err. Gueuren baytan, barrenean, furia, turbacio edo colera itsucen gaitustenac.*

Beriainek beti darabil *passio*, baina Jesukristok bizi izandakoarekin lotua dago hitz horren lekukotasun oro. Elizalderen eta Lizarraga Elkanokoaren banaketa bera du Urizko dotrinak ere, eta Amaiurko 1659ko esaldian *Jaincoaren passioa* ageri da.

Oro har, beraz, goi-nafarrerak, gainerako euskalkiek bezala, bokal arteko sudurkari zaharra galdu zuen —areago, dirudienez, EBZrako bokal arteko *-n-* galdua zen (Lakarra 2011: 193)—. Halarik ere, iparraldeko goi-nafarrerako hizkera batzuk —Bortzirietakoa eta Baztangoa, batez ere— berritzaile izan dira Lapurdirekin eta Nafarroa Beherearekin batera, eta bokal arteko sudurkaria galdu ondoren *-n* erantsi dute amaieran; horregatik ditugu *-ain* eta *-ione* bukaerak eskualde horietan.

Banaketa hori onartuz gero, ez da erraza Nafarroako hegoaldean erabiltzen den *pasione* azaltzen. Beharbada, kontuan hartzen badugu hitz bakarrarekin gertatzen dela, eta bi aldaerak esanahiari loturiko banaketa osagarrian daudela, pentsa daiteke beste euskalki edo hizkera batetik hartutako mailegua dela.

Dagoeneko ikusi dugun bezala (cf. § 3), goi-nafarrerak duen ezaugarri esklusiboetako bat da maileguetako *-on* bere horretan mantentzea. Dagoeneko XVI. mendean bada ezaugarri hori: *varon* (HenBer), *bofeton* (Uterga, 1602) baina *buffeta* (Urroz, 1582), *ladronec* eta *millonac* (Ber*Meza*, Ber*Dot*) eta *ladronen* eta *ladronaq* (Baraibar, 1649), *ladrona* (ObanosBer). Beranduago, Lizarraga Elkanokoak eta erronkarieraz Hualde Maiok ere *ladron* eta eratorriak dituzte. Ezaugarri hori ez da iritsi nafarreraz mintzo den Gipuzkoako ekialdera, eta *dobloi* eta *colchoi* ditugu Irungo Udaleko agirietan. Amaitzeko, hizkera batzuek *i* ondoren sudurkaria berrezarri dute; aldiz, beste batzuek ez dute halakorik egin: Orreagako amari idatzitako bertsoetan *erreguina* dena, *erreguia* (lat. *regina*) da Beriainen obretan eta Aresoko otoitzetan. Gainera, Beriainek berak *amaguiarrava* dakar eta 1729ko sermoian *lengusia* 'lehengusina' agertzen da.

Bestalde, horrekin batera, **e-nor* > *ĩ(h)or* > *nior* eta **e-non* > *ĩ(h)on* > *nion* egin da hizkera batzuetan. Dirudienez, Nafarroako hegoaldean eta Zaraitzun *i(h)or* eta *i(h)on* mantentzen dira, adibide hauek ditugu, besteak beste: *ihorc* (Ber*Dot*), *ior* (HenBer, NafKat, Ber*Meza*, Ber*Dot*), *ion* (Ber*Meza*, Ber*Dot*), *iolatreco* (Serm1729) eta *ior*, *iondic* (El*Dot*). Iparraldean, aldiz, bilakabidean pauso bat gehiago eman da, eta *n-* gehitu dute: *niorc* (Amendux, LeitzAuzi), *nior* (Perotxegi), *niori* eta *niorc* (JElGut). Beranduxeago, *nior* du Sanzberrok eta *nihorc* agertzen da Baztango 1750eko eliz aginduan. Mendiburuk eta Lizarraga Elkanokoak *nior* eta *nion* dituzte. XVIII. mende hasieran, ordea, Irunen *iñorq* dugu. Banaketa geografikoa aski garbia da: hegoaldeko goi-nafarrerak *ior* du eta iparraldekoak *nior*. Halere, hegoaldeko goi-nafarrerazkotzat hartzen den Lizarragaren Elkanokoaren obretan *nior* eta *nion* daude, eta Aezkoako dotrinetan sudurkari gabekoak nagusi badira ere, behin *niorquere* daukagu Orbarako dotrina baten (Camino 1991: 939).




**10. mapa**

*iñor/nior/ior* banaketa Nafarroan

### *3.1.2.5. *j-ren ahoskeraz*

Mitxelenak (*FHV* § 9.2) dioenez, **j-* zaharrak izan duen bilakabideak dialektoen arteko desberdintasun handiak eragin ditu; eta horretan gordetzaile izan dira, batetik, iparraldeko goi-nafarrera eta, bestetik, hegoaldeko aldaeran mintzo diren Erro eta Auritz, hizkera horietan [j] sabaikaria ahoskatzen baitute. Aldiz, [ʃ] sabaiaurreko igurzkari ahoskabea dute Zaraitzun eta Erronkaribarren, Aezkoan, Eguesibarren, Artzibarren, Uharte-Arakilen eta Arakilgo ibarrean. Azkenik, Ergoienan, Burundan eta Sakanako beste leku batzuetan, Larraunen, Araitzen eta goi-nafarreraz mintzo diren Gipuzkoako herrietan [x] igurzkari belar ahoskabea dugu (*ibid.*). Apalauzak (2012: 238) azpimarratzen duenez, Nafarroako ipar-mendebaldean, egun, [x] ahoskatzen da Imotzen, Larraunen, Araitz-Betelun eta Basaburu Nagusiko hegoaldean; aldiz, [j] dugu Imozko Muskitzen, Basaburu Nagusiko Erbitin, Gartzaronen, Berueten, Arraratsen, Igoan eta Orokietan. Horra, beraz, isoglosa non den gaur egun.

Testu zaharretan grafiak ez du asko laguntzen kasu bakoitzean hots horren ahoskera zehazten, usu <j> erabiltzen delako belarra zein sabaikaria islatzeko. Dena dela, grafia sistematizaturik ez izateak bere abantailak ditu, eta batzuetan <i> eta <y> grafemak <j>-ren testuinguru eta hitz berean erabili izanak ahoskera sabaikaria isla dezake. Ditugun zailtasun horiek onarturik, XVI. eta XVII. mendean dugun banaketa ez bide da arestian ikusitakoa bera.

Mitxelenaren irudiarekin bat, erdigunea gordetzaile da ahoskera horri dagokionez, eta sabaikaria dugu Bortzirietatik eta Baztandik hasi eta hegoalderaino, Iruñetik pasata: *iauna* (EnriBor), *iaungoicoaren*, *iuramenturic*, *iayac*, *iniuriac*, *iatean* (Ber*Dot*), *ioan* (FelBer), *yauna*, *yeinco* (BeraGut), *yendioq* (MElGut), *iaustea*, *Iesus* (Perotxegi). Elizaldek dotrinan beti <j> idazten duenez, nekez jakin dezakegu ahoskera zehatza. Grafiagatik, zalantza sor dezakete Sueskunen zortzikoak dakarren *gayo* 'jaio' eta Adiosko 1650eko lekukotasuneko *guan* adibidek (*juan* ere badago prozesu berean).

Iduriz, Nafarroako mendebaldean XVI. eta XVII. mendeetan ez da **j*- > *x*- igurzkari belar bilakatu. Sakanan, artean, sabaikaria zen, *yaten* (Hiriberri, 1619) eta *yaurtia* (Altsasu/Burunda, c. 1648) adibideek erakusten dutenez. Areson ere hots bera dugu: *ya[...]*, *iuzgacera*, *iuezaren* (AresOtoi). Beranduagokoa behar du, beraz, *j*- > *x*- bilakabideak. Aitzitik, zaharragoa bide da **j*- > ʃ- bilakabidea. Dirudienez, XVII. menderako aldaera sabaiaurrekoa dugu —<x> grafemaz adierazia— *xarriric* (OrreBer) adibidean. Hurrengo mendean 1729ko sermoian ditugun *xaquin*, *xan*, *xarduquiceco*, *xaquinen* adibideek sabaiaurrekoa dutela dirudi. Dena den, *jaietaco juan*, *jarri*, *joan* eta *jaio* ere baditu; beraz, ezin zehatz jakin zer den grafema horren atzean dagoen hotsa.

Caminok (2003b: 69) hegoaldeko goi-nafarreraren ezaugarri ia esklusibo bateratzailetzat dakar «**j*- zaharraren ahoskera sabaiaurrekoa». Haren arabera, ahoskera hori dugu Goñerrin, Olloibarren, Oltzan, Izarbeibarren, Elortzibarren, Eguesibarren, Artzibarren eta Aezkoan. Aldiz, azaltzen du Bonapartek Garesen belarra entzun zuela, eta Gesalatzen ere hala izan zitekeela ere iradokitzen du Caminok. Sabaiaurrekoa zegoen, dirudienez, Arakilen, Eslaba aldean, Ezkabarten eta Txulapainen. Handik iparraldera sabaikaria dago Berueten, Arraratsen, Igoan, Imozko Muskitzen, Atetzen, Odietan, Ultzaman, Anue, Esteribarren eta Erroibarren.

Laburbilduz, Nafarroako erdialdean gordetzaile mantendu da.[1259] Aldiz, ekialdehegoalde zabalean **j*- > ʃ- berrikuntza egin zen aspaldi samar. Horren bilakabide paraleloa dukegu Nafarroako mendebaldean, ondoren Arakilen mantendu dena. Mendebalde horretan, Gipuzkoarekin batera *ʃ- > *x*- egin zuten beranduago. Ez da erraza aldaketa hori noizkoa den esaten, baina ematen duenez XVIII. mendean Gipuzkoan belar ahoskatzen zen. Mitxelenak dakarrenez (*FHV* § 9.3), Larramendik zioen leku batzuetan *j* «oso gutural» ahoskatzen zela, erromantzean bezala. Etxeberri Sarakoak ere gaztelaniak euskaran izandako eragintzat aipatzen du *i* eta *x*-ren ahoskera «lodiegia», euskararekin bat ez datorrena.

### *3.1.2.6. Sabaikariak*

Ezagun denez, euskaraz bi sabaikaritze mota daude: asimilaziozkoa eta adierazgarria. Horietako bakoitzak bere bilakabidea izan duenez (Oñederra 1990), hemen ere hala bereiziko ditugu.

Sabaikaritze adierazgarriei dagokienez, aski zaharra dirudi, eta lehen lekukotasunak agertzen direnerako lekukotzen da: *xabal* (EtxalekBer), *chucendu*, *chuçendu* eta *xuxendu* (Izkue, 1609), *chuxenqui* (Serm1729). Dena den, 1743ko lehenengo sermoian *zar* agertzen da, sabaikaritze adierazgarririk gabe, 'txar' esanahiarekin.

Sabaikaritze automatikoaz den bezainbatean, goi-nafarreraren eremu osoa hartzen duela esan daiteke, eta testu zaharrenetarik lekukotzen da bai /i/ bokalaren, bai /Bj/ diptongoaren ondoko sabaikaritzea. XVI. mende hasierako *Breviarium*-ean dauden hilabete izenetan sabaikaria agertzen da dagoeneko: *içozilla*, *oçalla*, *aprilla* (IruñEgut). Mendearen akabuan, Aresoko otoitzetan *illen*, *glorificaçaillea*, *ill cela* sabaikaridunak ditugu. Areson bertan, 1608an, *çiquiña* agertzen da, baina *siquina* ere bai. Lehenago

[1259] Oro har erdigunea berritzaileago izan ohi bada ere, ezaugarri honekin, agidanez, gordetzaile mantendu da.

ez da erraza sudurkari sabaikariaren lekukotasunak aurkitzea, batez ere grafiagatik. Esaterako, Etxalekuko XVI. mende erdialdeko bertsoetan *oyna* eta *buztayna* ditugu, eta ezin jakin sabaikaria islatzen duten ala ez.

XVII. mendean egoera ez da bestelakoa: *deño* eta *iriñetan* (IsEr), *báyña* (EzkOl), *baña*, *aitziñan* eta *baño* (FelBer), *ollasco* (ArreKop), *baño*, *eraguiñen*, *nerequiñ*, *illabete*, *orañ*, *Martiñeneco*, *eguiñ*, *eguiñen*, *billa* (MElGut). Beriainek ere badu bilakabidea: *salvazalleac*, *cebillen*, *orzillare* albokarien kasuan eta sudurkarietan *ceñec*, *bayño*, *soñetan*, *oñetan*, *azqueneraño*. Altsasu eta Burundaren arteko 1648. urte inguruko auziko agirian *baño* dago. Era berean, XVIII. mendearen lehen erdian aurki daitezke sabaikaritzeen adibideak: *soñecua*, *ólluaq*, *iñorq* (Irun1721), *elloba*, *milla*, *vaña*, *eguiñ* (Serm1729), Elizaldek dotrinan *billurisic* dakar behin, baina beti *ilen*, *gañetic*. *baño*, *oñetan* (El*Dot*), *eguiñ*, *beñere*, *dabilla*, (Serm1743-1), *aiñ*, *baña*, *illuntasunac*, *illa* (Serm1743-2).

### *3.1.2.7. Kontsonante multzoak*

Goi-nafarrerazko testuetan, arkaikoenetatik hasita, oso goizetik aurki litezke kontsonante multzoek jasandako aldaketak.

Esate baterako, goi-nafarrera arkaikoan baditugu herskariz amaitu eta beste ahoskune bateko herskari batez hasten diren bi hitz elkartzean gertatzen den bilakabidearen lehen adibideak: *jaunatiçula*, *jaunatizula*, *baytator* (ZalbGut), *baicara* (Iraizotz, 1597).

Era berean, txistukaria eta herskaria elkartzean aldaketa gertatzen da garai berean: *ezten* (ZalbGut), *espaytugu* (Iraizotz, 1597), *ezcaiçaçula* (AresOtoi), *estu*, *estudan* (Amendux). Lekukotasun zaharrenetan aurkitu dugun salbuespen bakanetakoa *noyzbait* (Amendux) dateke. Ziraukin *Ayçgorria* dago 1574an.[1260]

Bestalde, *-*rtz*- antzinagoko multzo batetik[1261] euskalki historikoek bilakabide ezberdina izan dute. Goi-nafarrerari dagokionez, eremu nagusienean *-rz-* eta *-rtz-* irtenbidearen alde egin da. Aurkitu dugun lehen adibidea 1536koa da eta bertan *verce* (EzkonArizkun) agertzen da; eta gauza bera dugu Beorburun, Utergan, Bakedaon, Agoitzen eta Zufian. Mende horretan ere, 1549an, *berçeri* (IrañGut) dugu. Beriainek ere beti *-rz-* egiten du, eta Elizaldek ere bai. Mendebalderago, Leitzako apaizaren auzian *amaborz*, *borzetan* baina *vezte* ditugu.

Ezaugarri horri dagokionez, badirudi isoglosak Nafarroako mendebaldeko ertza gainerakotik bereizten duela. Isoglosaren ezkerraldean *-st-* egiten da Goizuetan *besteay* (Goizueta, 1633), Areson *beste* (AresOtoi), Irunen *beste*, *amavost* (Irun1721) eta Sakanan;[1262] aitzitik, eskuinetara *-r(t)z-* dugu, Bortzirietatik hasita: *borz iriac* (Bera-Lesaka, 1615), *bertzeac* (BeraGut), *berzeren* (JElGut), *borz* (MElGut). Ur-

---

[1260] NAN, Zirauki, 1574, M. de Iriarte, Ziraukiko protokoloak, 2.

[1261] Ik. orain *beste* / *bertze*-ren etimologiaz Lakarrak (2011: 175) dioena, **ber-tz-te* berreraiki ondoren.

[1262] Sakana aldeko lekukotasun zahar gutxi dago eta horietan ez dugu *beste* aurkitu, baina Bonaparteren ondareko Urdiaingo eta Etxarri Aranazko dotrinetan *beste* agertzen da beti. Egungo datuetan oinarriturik, Caminok (1999: 46) *-st-* eremukotzat ditu Ihabar, Murgindueta, Irañeta, Urritzola eta Izurdiaga.

basa eta Andia mendizerren hegoaldearen egoera Caminok (1999: 46) islatzen du eta, dirudienez, *-r(t)z-* dugu Goñerrin, Olloibarren, Utergan, Garesen eta Gesalatzen. Gaur egun, Nafarroako ipar-mendebaldean *-st-* da nagusi Imotz eta Basaburu Nagusiko ekialdean bide dago muga (Apalauza 2012: 294). Azkenik, Zelaietak (2008: 93) argi azaltzen du zein den egun isoglosa horrek Baztan-Bidasoan duen egoera:

> Beintza-Labaienen *ortzeun* 'ortzegun', *urtzila* 'ortzirala', *bertze* eta *bortz* bederen bildu ditugu, nahiz eta *beste* eta *bost* ere entzun ditugun. Isoglosa hemen barrena igarotzen da, nolabait: (i) Iturengo auzoa den Aurtitzen (eta hemendik ekialdera) *bertze* modukoak aukera bakarra dira; (ii) Beintza-Labaienen lehia dagoela iduritu zaigu; (iii) Zubietatik ezker, ordea, *-st-* taldea nagusi bide da, nahiz eta guk Zubietan berean, *ortzeun*, *urzila* erakoak bakan bildu ditugun. [...] Bertze alde, *ertze* eta *mazurtza* Eratsuneraino iristen dira, Ezkurran hasten baitira *este* eta *masusta*.

### 3.1.3. Azentua

Ezagutzen zailenetarik den ezaugarri fonologiko zaharra azentua da, testuetan ez baita markatzeko ohiturarik. Mitxelenak (1972 eta, sakonago, 1976b) hegoaldeko goi-nafarreraren azentua III. tipokotzat hartu zuen, batez ere Lizarragaren obretako azentua azterturik. Dirudienez, azentu eredu hori «gaztelaniaren antzekoa» da eta silaba azentudunen eta azentu gabeen arteko aldea oso nabarmena da.

Mitxelenak erakusten duenez (1972: 168), tipo hartako hizkeretan azentua azken-aurreko silaban egon ohi da absolutibo singularrean; aldiz, pluralean ez du erregulartasunik ikusten Mitxelenak (1976b: 184). Aitzitik, mugagabean azentuaren lekua mugatu singularrak zehazten du: *abrátsa* > *abráts*, *egúna* > *egún*, *árrja* > *árri*, *órdwa* > *órdu*. Hala ikusten du, behintzat, Mitxelenak (1976b: 184) Lizarragaren kopletan. Beranduago, Artolak (1992) Mitxelenak ateratako ondorioa berretsi zuen datu berriagoak erabiliz. Bestalde, egungo datuetan oinarriturik, Hualdek (1997: 74 eta hh) ekialdeko azentubidetzat hartu zuen Erronkaribartik Baztanera, Ultzamatik barrena doan azentua, hau da, Erroibarren, Esteribarren, Baztanen eta Ultzaman egiten dena. Horietan azentua azken-aurreko silaban dago.

Hain zuzen ere, Baztandik mendebaldera beste azentu mota bat ikusten du Hualdek (1997: 109 eta hh), erdialdeko azentua deitzen duena, alegia. Mitxelenak (1972: 169) IV. tipokotzat hartu zuen iparraldeko goi-nafarrerakoak diren Bortzirietako, Beintza-Labaiengo, Irungo eta Hondarribiko hizkeren azentua, eta azpimarratu zuen horietan intentsitate desberdintasun handia dagoela silaba azentudunen eta azentugabeen artean. Gainera, bokal azentuduna luzatu egiten da eta, sarritan, silaba postonikoa galdu ohi da. Oro har, azentua bigarren silaban egoten da hitz isolatuetan. Dena den, goi-nafarrerari gagozkiola, Sakana, Imotz eta Basaburuko azentuak erdialdeko sistemakotzat baditu ere, berezitasun bat bide dute: azentua, oro har, lehen eta azken silaban egon ohi da hizkera horietan, eta batzuetan bigarren eta azken silaban.

Jakina, arestiko laburpen horrek batez ere egungo edo azken urteotako egoera deskribatzen du, eta ezin dezakegu jakin garai zaharrenetan sistema berberak zeuden ala ez, 1745 aurreko lekukotasunetan ez baitago azentua markatzeko joerarik. Dena den, 1609ko Ezkurraren olerki sarituak azentua markaturik du <^> batez. Bertan ikus daitekeenez, azentua azken-aurreko silaban jartzeko joera nabarmena dago;

azentua markaturik duten hitzen %68ak hala du, eta %72ra igotzen da proportzioa *borondátea*, *múnduan*, *báqueac, cindúquean*, *viótçean*, *Jáyncoa* gisakoetan diptongotzat hartzen baditugu *-ea-*, *-ua-* eta *-oa-* bokal bilkurak, silaba kopuruak iradokitzen duen moduan (ik. Mitxelena 1976b eta hemen § 3.1.1.3). Gainera, azentua aldatu egiten da atzizkiak gehitu ahala azken-aurreko silaban jarrai dezan: *guíçon*, *guiçónac* eta *guiçonári*.

Gainerako %20k azken silaban du azentua, baina horietarik gehienak bertso-lerroaren amaieran daude eta erritmoaren estiloari erantzuten dio (Mitxelena 1976b: 189 eta hh). Gainera, hitz berberek beste testuinguruan azentua azken-aurreko silaban dute: *çerudán* baina *çéru*, *çéruan*; *guiçonác* baina *guíçon*, *guiçónac* eta *guiçonári*.

Bertso-lerroaren amaieran ez dauden eta azken silabako azentua duten hitzak *betatçén*, *chipitú* eta *barcatçén* dira, baina horietan aditz laguntzailea ere kontuan hartuz gero, atzetik hasita bigarren silaban legoke azentua: *betatçén du*, *chipitú çe*, *barcatçén du*.

Halaber, *óso* partikulak badirudi azentua bere horretan uzten duela, *ósoric* baitago.

Adibide horietan ikus daitekeenez, Ezkurraren azentu sistema Lizarragarenetik aldentzen da. Ezkurra nongoa zen ez dakigun arren, hizkeragatik hegoaldekoa dirudi, besteak beste, iraganeko *-n* falta baitu eta soziatiboan *-reki* baitauka. Hori ikusita bi proposamen etortzen zaizkigu burura:

a) XVII. mendearen hasieran oraindik ez zegoen indarrean Lizarraga Elkanokoaren garaian indarrean zegoen azentu sistema hegoaldeko goi-nafarreraz.
b) Hegoaldeko goi-nafarreraren barnean azentu sistema ezberdinak zeuden.

Hirugarren aukera izan liteke pentsatzea Ezkurrak olerkia osatzeko Iruñeko edo inguruko euskara erabili bazuen ere, bera iparraldeko goi-nafarreraz mintzo den eta ekialdeko azentubidea duen herriren batekoa izatea, eta azentu sistema hori islatzea testuan.

Iparraldeko goi-nafarrerazko hizkerei dagokienez, azentuaren egoera lausoagoa da. Bortzirietako lekukotasunetan ditugun sinkoparen adibide urriek ez dute laguntzen azentua non dagoen jakiten. Dena den, Aresoko 1608ko esaldiko *orlaco* eta Altsasu eta Burundako 1648 inguruko *onlaco*, *atra* adibideek erakuts lezakete azentua ez dagoela bigarren silaban, hain zuzen ere, hori galtzen baita.

### 3.1.4. Ondorio zenbait

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean fonologiaren esparruan gertatu diren aldaketa nagusiak ikusi ditugu atal honetan. Orain, ondoko bi tauletan aztertu ditugun berrikuntza positiboak eta negatiboak zerrendatu ditugu (§ 1.2.1). Taula bakoitzean, ezaugarriaren ondoko zutabean mendea jarri dugu: berrikuntza positiboen kasuan, lehen aldiz zein mendetan lekukotzen den zehazten du; negatiboen kasuan, ordea, noizko galdu den. Halaber, bi tauletako azken zutabean ezaugarriaren hedadura zein den zehaztu dugu; hau da, orokorra den ala eskualderen batean agertzen den (ik. 5. mapa); horietan, beraz, non agertzen den adierazi dugu. Orokorren barruan hiru eskualde/autoretan edo gehiagotan ageri diren ezaugarriak sartu ditugu. Aldiz, eskualdekotzat hartu ditugu leku batean edo elkarren ondoko bitan bakarrik agertzen diren ezaugarriak. Taulan ez daude aztertu ditugun ezaugarri guztiak; baina daudenek dialektalizazioa nola izan den ulertzen lagun dezaketela uste dugu.

**3.1. taula**

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean fonologian gertatu diren berrikuntza positiboak

| | Azpiatala | Berrikuntza positiboak | Noiztik | Hedadura |
|---|---|---|---|---|
| 1 | § 3.1.1.1 | *etx- > itx-* | XVII | Ipar-mendebaldea |
| 2 | § 3.1.1.1 | *e_u > i_u* | XVI | Hego-ekialdea |
| 3 | § 3.1.1.1 | *e-o > o-o // o-e > o-o* | XVII | Orokorra |
| 4 | § 3.1.1.3 | *au > ai* | XVII | Izarbeibar, Artaxoa |
| 5 | § 3.1.1.3 | *eu > e*: *nere*, *gere*, *zere* | XVI | Ipar-mendebaldea |
| 6 | § 3.1.1.3 | *oa- > goa-* | XVI | Orokorra |
| 7 | § 3.1.1.4 | *aho > ao > ago* | XVI | Orokorra |
| 8 | § 3.1.1.4 | *iB > iyB*; *uB > ubB* | XVII | Bortziriak-Irun |
| 9 | § 3.1.1.4 | *ae > e* | XVI | Orokorra |
| 10 | § 3.1.1.5 | Sinkopak | XVI | Orokorra |
| 11 | § 3.1.2.3 | Ozen ondoko afrikatua | XVII | Erdialdea |
| 12 | § 3.1.2.4 | *-*ani > -ain* | XVI | Baztan, Bortziriak |
| 13 | § 3.1.2.4 | **enor > nior* | XVI | Iparralde osoa |
| 14 | § 3.1.2.4 | *-on* | XVI | Orokorra |
| 15 | § 3.1.2.5 | **j > [ʃ]* | XVI | Ekialde-hegoaldea |
| 16 | § 3.1.2.5 | **j > [x]* | XVIII | Mendebaldea |
| 17 | § 3.1.2.7 | *-rtz- > -st-* | XVI | Ipar-mendebaldea eta mendebaldea |

Arestiko taulan ikus daitekeenez, XVI. menderako goi-nafarrerak baditu berrikuntza positiboak. Dena den, bilakabide horiek ez dira goi-nafarreraren esklusiboak; inguruko dialektoekin partekatzen baititu ezaugarri horiek. Goi-nafarrerarena dirudien ezaugarri fonologiko esklusibo zahar bakanak *e-o > o-o // o-e > o-o* asimilazioak (3) eta *-on* bukaerak egitea bide dira (14).

Horiezaz landara, XVII. mendean badira dialektoaren barnean eskualdeak bereizten dituzten ezaugarriak ere: *iB > iyB*; *uB > ubB* (8) dugu Bortzirietan, Irunen eta baita Lapurdin ere (Lamikiz *et alii* 2013: 336). Gainera, Bortzirietan eta Baztanen, Lapurdirekin, Nafarroa Beherearekin eta Zuberoarekin batera, *-*ani > -ain* (12) egin dute, goi-nafarreraren gainerako hizkeren kontrara. Sakonago begiratu beharko litzateke, beraz, Nafarroako bi ibarrotako hizkerek Bidasoaz bestealdeko eta Pirinioez iparraldeko mintzoekin izan zuten lotura historikoa.

**3.2. taula**

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean fonologian gertatu diren berrikuntza negatiboak

| | Azpiatala | Berrikuntza negatiboak | Noiz | Hedadura |
|---|---|---|---|---|
| 1 | § 3.1.1.2 | Bokal luzeak | XVI | Orokorra |
| 2 | § 3.1.2.1 | Hasperena | XVI | Orokorra |
| 3 | § 3.1.2.2 | Bokalarteko herskari ahostuna galtzea | XVIII | Ia orokorra |
| 4 | § 3.1.2.4 | Bokal sudurkariak | XVI baino lehenago | Orokorra |
| 5 | § 3.1.2.4 | Bokal arteko *-n-* galtzea:<br>**-ani > -ai*<br>**ini > i*<br>**-one > -oe, -oi*<br>**enor > ior* | XVI baino lehenago | Orokorra |

Horretaz landara, goi-nafarrerak batzuetan EBZetik bide datozen hotsak mantendu ditu, beste dialekto batzuek berritu duten arren. Hau bide da **j-* zaharraren ahoskeraren kasua (15, 16). Goi-nafarreraren inguruko hizkerek **j-* sabaikaria sabaiaurreko edo belar ahoskatzen duten arren, sabaikari mantendu da goi-nafarreraren eremu handienean.

## 3.2. MORFOLOGIA

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharraren hots sisteman dauden ezaugarri nabarmenak ikusi ostean, morfologian dauden ezaugarriak aztertuko ditugu orain. Gisa honetako lanetan ohi den bezala, bitan banatuko dugu saioa. Lehen zatian izen morfologiaz (§ 3.2.1) eta horri dagozkion gaiez arituko gara. Ondotik, aditz morfologia aztertuko dugu (§ 3.2.1.16). Akabuan, ondorio orokor batzuk aurkeztuko ditugu (§ 3.2.3).

### 3.2.1. Izen morfologia

Izen morfologiari eskainitako atal honetan, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrak dituen hainbat ezaugarri iruzkinduko ditugu: artikulua (§ 3.2.1.1), erakusleak (§ 3.2.1.2), genitibo pleonastikoak (§ 3.2.1.3), pertsona izenordain indartuak (§3.2.1.4), izenordain posesiboak (§ 3.2.1.5), *zu* eta *hi* pertsonen erabilera (§ 3.2.1.6), ergatibo plurala (§ 3.2.1.7), datiboa (§ 3.2.1.8), soziatiboa (§ 3.2.1.9), instrumentala (§ 3.2.1.10), destinatiboa (§ 3.2.1.11), prolatiboa (§ 3.2.1.12), motibatiboa (§ 3.2.1.13), bizidunetako kasuak (§ 3.2.1.14), *-kotz* (§ 3.2.1.15), ablatiboa (§3.2.1.16), adlatiboa (§ 3.2.1.17), atzizkiak (§ 3.2.1.18).

### *3.2.1.1. Artikulua*

Euskara arkaikoan singularerrako hiru artikulu eta pluralerako bi baditugu ere (Mounole & Gómez 2018: 500), goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean aski iharturik agertzen dira hirugarren gradukoak ez, beste guztiak.

XVI-XVIII mende bitarte horretan lehen eta bigarren graduko artikulua agertzen da; batik bat, testu zaharrenetan. Pluraleko adibide ditugu ondoko hauek: *içoc* (Amendux), *egaloc* (Ziga, 1576), *sorguinoc* (Orokieta, 1578), *bioc* (Iruñea, 1583), *çiquinoc* (Olague-Anue, 1615), *gucioc*, *diradenoc* (Ber*Meza*), *guztioc* (Altsasu/Burunda, 1648), *gucioc* (Berriozar, 1661). Aresoko otoitzetan, ziurrenik fosildurik, *becatarioy*, *desterratuoc*, *veguioc* ditugu. Elizaldek *desterratuoc* beharbada fosildurik darabil, baina *bioc* ere badu. Ohart gaitezen, aurkitutako adibide guztiak dira absolutibo pluralekoak, Aresoko bat salbu. Beranduago, Lizarraga Elkanokoak ere badu *-ok* artikulu hurbilaren alerik.

XVI. eta XVII. mendeetan pluraleko artikulu hurbila maiz agertzen bada ere, XVII. mendean dagoeneko erabilera galtzen hasi dela dirudi: *gu becatariengatic*, *gu becatariengatic* (NafKat, Ber*Dot*, El*Dot*).

Pluraleko artikulu horietaz gain, singularrean bada laginik, hala nola *aycenori* (Iruñea, 1563), beharbada *gaysto andurrorreq* (1562), *beyau* (Eugi, 1566), *anditasunonec* (Larrasoaña, 1606), *monja onori* (Areso, 1608), *hene amori* (Etxarri, 1614), *hoquerrorreq* (Altsasu/Burunda, c. 1648). Urralbeitiko San Vicenteko 1578ko lekukotasun batean *xarrori*, *xarrorrec*, *puñalori*, *çarquiori*, *erromessori*; iduriz, guztiak artikulu. Dena den, ikus daitekeenez, oso adibide gutxi ditugu, eta gehienak bigarren gradukoak dira.

XVIII. menderako lekuaren arabera fosildurik baino ez da ageri artikulu hurbila; esaterako Elizalderen dotrinan, arestian aipatutako *desterratuoc* eta *bioc* gisako egitura fosilduak bakarrik ditugu. Hala eta guztiz ere, 1729ko sermoian lekukotasun zaharren aurkako jokabidea dago; lehen graduko artikulu hurbila lekukotzen da, *ene entendamentuau*, *neure buruau, batau*, *berceau* ditugu, gainerako testuetan baino emankortasun gehiagorekin; aldiz, ez da bigarren graduko artikulurik. Edonola ere, zalantza gutxi dago *-au* artikulua dela pentsatzeko, sermoi horrek erakusleen kasuan *gau* baitu.

Artikuluaren erabilera baino gehiago, honen erabilera eza da nabarmena zenbait adibidetan, hala atributuetan nola objektu zuzenetan: *çu guiçon* ***prestu*** (Ollogoien, 1570), ***escu*** *egosten duenac*, *valemoque* ***castigu*** (Urdotz, 1687), *on du erric bere* ***legue*** eta ***on*** *dana* (IsEr), ***ceruco*** *zarade* (ObanosBer) edo *Gularen contra iatean eta edatean* ***templatu*** *içatea* (Ber*Dot*).

Azkenik, 1582ko Urrozko *quexassen den ha* lekukotasunak eraskuts lezake *ha* hori erakusle izatetik gertuago dagoela (Manterola 2015: 329); dena den, esaldi berberean *guiçona* dugu. Orobat, 1629ko Irunberriko lekukotasunean *fraide hoc* agertzen da; erabat gramatikalizatu ez den erakuslea bide da.

### *3.2.1.2. Erakusleak*

Erakusleez den bezainbatez, berezitasun gutxi dago singularreko formetan: *au*, *ori* eta *ura* baitira lekukotzen diren forma nagusiak. Honatx adibide zenbait: *dagoen*

*au* (EzkonUitzi), *suc ezindiro erran au* (Lesaka, 1549), *atra zaçue guiçon ori* eta *ori da puta baten semea* (Altsasu-Burunda, c. 1648), *guizon ura* (Serm1743-2). Hala ere, adibide hori da aurkitu dugun gisa honetako lekukotasun zahar bakarra. Singularreko hirugarren graduko ergatiboko kasuetan, *harc* du Beriainek, baina XVIII. mendetik aurrera *arrec* (ObanosBer), *ama garrec* (Serm1729) agertzen dira. Elizaldek ez dakar erakusleekin ergatiboaren adibiderik; halere, *arren* (baina *aren* gehiagotan) eta *arrenganic* ditu.

Pluralezko formei dagokienez, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean lekukotzen diren pluraleko lehen graduko erakuslearen forma zaharrena *o(h)ek* da: *oec* (LeitzAuzi), *ohec* (AresOtoi, LeitzAuzi, Ber*Meza*, Ber*Dot*), *oen* (Ber*Dot*, Serm1743-1). Dena den, 1629ko Irunberriko esaldian *hoc* dago eta Irungo Udaleko 1721eko agirietan *oc* agertzen da.

XVIII. mendearen erdialdetik aurrera lehen graduko erakuslearen aldaera berriak agertzen dira: *obec* (Serm1743-1, ObanosBer eta El*Dot*[1263]) eta *oben* (Orrio). Aldaera horrezaz landara, *ebec*, *ebetatic*, *ebetan* (El*Dot*), *ebec*, *guebec* (Serm1729) lekukotzen dira.

Pluraleko bigarren gradukoen eraskusleen lekukotasun zaharrak oso urriak izan arren, *oriec* agertzen da testu zaharrenetan: *oriey* (Lesaka, 1609), *orieq* (Atarrabia, 1647) eta *oriec* (IsSal). Halere, mende horren akaburako *oyeq* (Urdotz, 1687) dugu. Elizaldek bere dotrinan ere *oyec* erabiltzen du. Badirudi aldaera hori hegoaldeko nafarreraren mendebaldeko hizkerek egiten dutela: Elizaldek, Martinez Morentingo biek, Utergako dotrinak, Goñerrin aurkitutako zenbait sermoik. Aldiz, ekialderago *horiec* forma osoa dute Lizarraga Elkanokoak eta Urizko dotrinak, besteak bestek.

Hirugarren graduko pluralean *ayec* & *aiec* erabiltzen da eremu osoan; Beriainek, Elizaldek, 1748ko sermoiak eta 1750eko Orrioko eliza-aginduak hala dute. Larraungo Baraibarko 1649ko lekukotasun batean *aeq* agertzen da.

Ikusitako horiezaz gain, *g-* herskari ahostuna duten erakusleak lekukotzen dira goi-nafarrerako hizkera batzuetan, XVIII. mendetik aurrera. Ezaugarri hori sistematikoki duen lehen lekukotasun ezaguna 1729ko sermoia da, eta bertakoak dira ondoko adibideak: *trabaju gau*, *conseju gau*, *sandu gura*, *abisu gura*, *principio gonequi*, *zor gueben*, *guebec*, baina *gauza ebec*. 1744 inguruko bertsoetan *zurruca gura* agertzen da, eta 1750eko eliza-aginduaren Orrioko bertsioak ere gisa horretako erakusleak ditu: *gonequi*, *gaisto gau*, *gaisto gobec*, *edicto gau*. Edonola ere, ezaugarri horren lekukotasun zaharrena XV. mendekoa da: *çure gomendatu gura* (PNoster).

Badirudi ezaugarri hau Iruñetik ipar-ekialdeko nafar mintzoetan agertzen dela; Caminok (2003b: 65) dakarrenez, *g-* hasieradunak Erroibarren, Eguesibarren, Artzibarren eta Aezkoan ageri dira. Orrioko 1750eko lekukotasunarekin mapa mendebaldera Ezkabarteraino heda daitekeela dirudi. Dena den, herskaririk ez da agertzen erakuslea errespetuzko izenordain gisa erabiltzen denean.

---

1263 Elizalderen dotrinan behin bakarrik agertzen da *o-* hasierarekin, gainerako guztietan *e-* hasiera darama, beraz hutsa izan liteke.

### *3.2.1.3. Genitibo pleonastikoak*

Erdoziak (2008: 109) dakarrenez, datiboan, genitiboan eta destinatiboan pluraleko atzizki pleonastikoak nagusitu dira Irunen eta Hondarribian. Bertakoak dira *gurasokeri* eta *lagunaken* modukoak. Indar gutxiagoz izan arren, Bortzirietan ere ageri da. Apalauzak (2012: 306-309) Nafarroako ipar-mendebaldeko hizkeretako adibide ugari dakartza; eta Nafarroako erdialdean ere badira. Manterolak (2015: 57-58) erakusten duenez, euskararen eredu eranslearen isla da ezaugarri hori, eta Irun-Hondarribiko muga aise gainditzen du:

> Badirudi, gainera, Irun-Hondarribiko adibideetatik kanpora ere aurki daitezkeela antzeko adibideak, eredu eransle horren indarra erakusten dutenak: cf. Uztaritzeko Baraziart eta Haraneder lohitzundarraren datibozko *hauki*, Haraneder, Axular eta besteren genitibozko *hauken*, *heken*, etab.; cf. orobat Etxeberri Ziburukoaren, Xurio azkaindarraren eta besteren genitibozko *hekien*, *hekiek*, jatorrian **hekeen*, **hekeek* hiperkarakterizatuak izan daitezkeenak. (...) Are gehiago, zabalago hartuta, urrunago ere jo genezake, mendebaldeko *-akaz* soziatibo plurala ere eredu eranslearen arabera azaltzen baita hobekien. (*-ak* + *-gaz* da, itxura guztien arabera; Mitx VII528)

Agidanez, ezaugarri hori XVII. mendekoa da, eta Berako olagizonaren gutunetako batean *equin faltan* 'haien faltan' ageri da, baldin eta *equin* 'haiek + -en' bada, eta ez soziatiboa. Hurrengo mendean, Irungo euskarazko idatzietan *oquen* 'hauen' agertzen da, eta egitura bera dugu 1750eko Baztango eliza-aginduetan dugun *hoquen* ere. XIX. mendeko Bertitzaranako dotrinan *hequen*, *hequin*, *hoquen* modukoak daude (Ondarra 1989). Lapurdi aldean, besteak beste, Axularrek eta Materrak *heken* modukoak dituzte. Beraz, Bortziriek, Baztanek, Bertizaranak eta Lapurdik berrikuntza hori partekatzen dute, nahiz eta erakusleetara mugatuta egon.

### *3.2.1.4. Pertsona izenordain indartuak*

Ez da erraza, lekukotasun kopuru mugatuagatik, goi-nafarrera arkaiko eta zaharreko izenordain indartuak zein ziren ezagutzen. Edonola ere, forma desberdinak aurki ditzakegu eskualdearen arabera.

Deierrin, 1564ko Eraulgo ezkontza gonbitean *zerau* agertzen da (< **zeur hau* batetik); aitzitik, 1648 inguruko Altsasu eta Burundaren arteko prozesuan zaharragoa den eta inoiz orokorra izan den, *çeurq* aldaera dago. XVII. mendean bertan, ordea, Beriainek *gueuroc* eta *ceurori* dakartza, eta XVIII. mendean Elizaldek dotrinan *ceurorrec* erabili zuen, eta 1744ko Obanosko bertsoetan *neuronec* eta *ceurorrec* agertzen da. Oro har, Lapurdin Materrak ere *-eu-* duten aldaerak ditu: *gueuroc*, *gueure*, *ceure*, etab. Halere, Altsasu eta Burundako *çeurq*-en pare, behin *ceurc* dakar; gainerakoetan *cerorrec* diptongo gabea (Krajewska *et al* 2017).

### *3.2.1.5. Izenordain posesiboak*

Izenordain posesiboez den bezainbatez, forma indartuetan goi-nafarrerak eta gipuzkerak *nere*, *gere* edota *zere* aldaerak dituzte diptongodunen ondoan. Dena dela, merezi luke testuak zehaztasun handiagoz begiratzea goi-nafarreraz egoera zein den hobeki ikusteko.

Espero litekeenez, lehen lekukotasunetarik *neure*, *ceure* eta *eure* ditugu xvi. mendean Nafarroa osoan. Dena dela, mendearen akabuan *guere* aldaera monoptongatua dugu Aresoko otoitz zaharretan *gueure* diptongodunarekin batera.

xvii. mendean ugari dira aldaera monoptongodunak, baina Bortzirietan: *nere* (BeraGut, JElGut), *zere* & *cere* (JElGut). Aitzitik, *neure* eta *ceure & çeure* ditu Beriainek.

Aldaera monoptongodunak ditugu xviii. mendearen lehen erdialdeko zenbait testutan: *zere* eta *guere* (Serm1743-2), *nere* eta *zere* (1748ko sermoia), *cere* eta *nere* Goizuetako 1753ko sermoian (Reguero 2015b); hirurak ere iparraldeko goi-nafarrerakoak. Bestelakoa bide da egoera hegoaldeko goi-nafarreraz mende horretan ere: Elizaldek *gueuren* eta *ceure* diptongodun ugari ditu, behin bakarrik *gueren*; eta 1729ko sermoian *neure* eta *gueure* ditugu. Aldiz, Obanosko bertsoan *nere* agertzen da, eta 1751ko sermoian ere bai (Satrustegi 1987: 82-85).

Horrezaz landara, arestiko adibideetan ikusten denez, xvii. mendetik aitzinera, pluraleko izenordain posesiboetan aldaera pleonastikoa agertzen da: *gueuren* (Ber*Meza*, Ber*Dot*, El*Dot*), *gueren* (El*Dot*, Serm1743-1, Orrio). Aldaera hori, ziurrenik, hirugarren pertsonako *bere/beren*-en analogiaz gertatu da, hain zuzen ere, *beren* erabiltzen baitute Beriainek eta Elizaldek, eta forma bera agertzen da 1729ko sermoian. Gure corpusean ez da bigarren pertsonako forma indarturik ageri, beraz, lehen pertsonako forma pleonastikoak bakarrik lekukotzen dira: idazle nafarren artean *zeuren* lehen aldikotz darabilena Joakin Lizarraga da, Euskal Klasikoen Corpusaren arabera.

### *3.2.1.6.* Zu *eta* hi *pertsonen erabileraz bi hitz*

Euskaraz singularreko bigarren pertsonan historikoki *zu* eta *hi* erabili izan diren arren, biek ez dituzte beti erabilera-esparru berberak izan. Ondoko adibideetan ikusi ahal dugunez, *hi* lagun artean eta famili giroan erabili da; *zu*, aldiz, errespetuzko erregistroetan.

Bereizketa horri loturik, interesgarri da 1648 inguruan Burunda inguruetako erabilerari buruz urte hartako prozesuak dakarren gogoeta:

> La palabra *çuc* no quiere deçir «vos», como suena en ella porque en este dicho lugar de Alsasua y los demas del valle de Burunda se tratan comunnmente assi entre deudos, como hamigos y otras personas de respecto con la dicha palabra de *çuc*, sin que se tenga por agravio ni descortesia, sino que quando quieren ablar con mas cortesia ha algun forastero y ha sacerdotes añadia *çure mesedea*, que quiere decir Vm.

Edo:

> La palabra *çuc* es comun y palabra de que todos en este dicho lugar ussan entre los mas amigos y familiares y es admitido por usual sin que se ofenda nadie por ella excepto que con los sacerdotes y otras personas menos tratadas no se usa sino que se diçe y abla con ellos de la palabra *çure merçedea* o *orre mercede.*

Ikus daitekeenez, *zu*k erabilera arrunta du, eta errespetuzko formatzat *çure mersedea* edo *orre mersedea* hartzen da.

Lekukotasun aipagarri horretaz landara, merezi du, laburki bada ere, euskarazko esaldien gaztelaniazko ordainek zein erabilera duten begiratzea, euskaraz nola erabil-

tzen zen ikusteko; esate baterako, Larraungo lekukotasunetan agertzen diren adizkietatik ondoriozta daiteke *hi* = *tú* dela:

> *erre bear* ***dun*** *eure lagunequin → quemar* ***tienes*** *con otros compañeros.*
> *Nay* ***duc*** *hene amori hil →* ***quieres*** *matar a mi madre.*

Eugiko 1565eko lekukotasunean ere halaxe da:

> *Eduqui* ***nahi dituc*** *heure hiçac? → ¿****Quieres*** *cumplir tu palabra?*

Iruñeko 1529ko esaldi honetan *çu* 'vos' da:

> *Çu çara vellaco çarra → vos soys vellaco viejo.*

### *3.2.1.7. Ergatibo plurala*

Ergatiboa markatzeko erabiltzen den atzizkiaren arabera, Euskal Herria bitan bana daiteke. Oro har, mendebalde zabalean —Araban, Bizkaiko eta Gipuzkoako zati handienean— *-ak* aldaera erabiltzen da lehen lekukotasunak ditugunetik. Aldiz, ekialde zabalean —Gipuzkoako ipar-ekialdea, Nafarroa Garaia eta Beherea, Lapurdi eta Zuberoan— *-ek* aldaera dugu.

Mitxelenak (1964d) **-aek* zaharrago batetik eratorritako formatzat hartzen ditu; baina berriki Manterolak proposatu duenez (2015: 362-363), erakusleetan eta izenordainetan *-ek* orokorra bada ere, izenaren deklinabidean agertzea ekialdean egindako berrikuntza dateke, *hek* erakuslea artikulu gisa gramatikalizatu eta ergatibo pluralaren marka gisa espezializatuta:

> Erakusleetatik eta izenordainetatik kanpo, ordea, argudiatu beharra dago berrikuntza dela ekialdeko izenaren deklinabide mugatuko erg. *-ek*, erg./abs. *-ak* zahar eta inoiz orokorragoaren aldean: izenordainetako eta erakusleetako *-ek* atzizkiaren aldean, bazter batekoa baizik ez da, ekialdekoa bakarrik, eta, inportanteagoa dena, balio bakarrarekin espezializatuta ageri da, ergatiboarenarekin, erakusleen jatorrizko eta berezko bereizketa eza galduta; erakusleetatik urruntzen duen ezaugarri honek du salatzen bere berritasun erlatiboa. (Manterola 2015: 363)

Proposamen hori kontuan hartuz, merezi du goi-nafarrerazko testuetan ergatiboaren bi aldaerek duten hedadura begiratzea, berrikuntzak nolako eragina izan duen ikusteko.

Hala, ergatiboa goi-nafarreraz lehen aldiz 1416ko gutunean azaltzen da, eta agerraldi hartan *-ek* dugu: *Garacicoec dute gracia*. Beraz, berrikuntza bada, lehenagokoa da. XVII. mendean Beriainek *-ek* erabiltzen du.

XVIII. mendera pasatuz gero, 1729ko sermoian *alacoec eguiten dute becatu mortale* dugu, *-ek* aldaerarekin. Obanosko 1743 inguruko bertsoetakoa da ondoko adibidea, hau ere *-ek*-duna: *Condenatuec orai cer emanen lukete?* Elizalderen 1735eko dotrinan ere sistematikoki *-ek* dugu: *guizonec eguin dezatela*; *profetec prometitu zutena*.

Badira XVIII. mendean *-ek* aldaerarekin batera *-ak* ere erabiltzen duten lekukotasunak. Besteak beste, 1743ko lehen sermoian *maiestruec diote* eta *cruçificaçen dutela becatoreac Christo* ditugu, eta urte bereko bigarren sermoian *guciec juicio eguin zuten* eta *au berau eguiten ditec becatoreac* agertzen dira. Kasualitateari egotz badakioke ere,

aipagarri da 1743ko bi sermoi horietan ditugun ergatiboko *-ak* aldaeraren bi adibideak aditzaren ondoren daudela.

Caminok (1999: 59-60) erakusten duenez, Goñerriko testuetan *-ak* da nagusi, baina Juan Iberokoak *-ek* erabiltzen du; Lizarrerrian ere *-ek* dago, eta Eguesibarko Elkanon eta Izarbeibarreko Garesen ere *-ek* dute Bonaparteren testuek; aldiz, *-ak* dago Oltzan, Goñerrian eta Gesalatzen.

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean bi aldaerak agertu arren, nagusi den aldaera *-ek* da; *-ak*, bereziki, geografikoki mendebaldeko hizkeretatik (Arabakotik eta Gipuzkoakotik) gertu dauden hizkeretan ageri da. Beraz, *-ek* berrikuntza dela onartuz gero, trantsizio-gunea Nafarroa mendebaldean eta ipar-mendebaldean zegoela dirudi (ik. Zelaieta 2008: 178; Apalauza 2012: 311), eta hortik mendebaldera ez da berrikuntza ailegatu.

### *3.2.1.8. Datiboa*

Izen arruntetako datiboaren markei dagokienez, sistematikoki singularrean *-ari* da testu zaharrenek erakusten dutena; erakusgarri gisa dakartzagu ondoko adibideok: *colectoreari* (ZalbGut), *apeçari* (1415eko esaldia), *dionari* (Lesaka, 1609), *Iaunari*, *andiari* (HenBer), *Jaunari* (AresOtoi), *Guiçonári*, (EzkOl), *gustiari*, *millari* (ElOl), *Iangoycoari* (NafKat), *denari* (BeraGut), *eztuenari*, *nagusiari* (ElizalGut).

Pluralari dagokionez, goi-nafarrera zahar eta arkaikoan *-ei* da marka erabiliena; hauek adibide: *dueney*, *gayztoey* eta testu berean osorik egon ez arren *[…]rduney*, *[…]uteney* (NafKat); *guztiéy* (EzkOl); *gustiei* (ElOl); *zuey*, *guziey*, *adisquideey* (JElGut); *guziyei* (MElGut); *personaei*, *guztiei* (LeitzAuzi); *peregrinoei* (Serm1729); *guciey* (Ber*Meza*), *guciey*, *medianeroey*, *sanduey*, *beneficioey*, *ezconduey*, *viciey*, *purgatoriocoey* (El*Dot*).

Hala eta guztiz ere, XVIII. mendearen erdialdetik aitzina *-eri* hasten da agertzen pluralean. Lehen aldiz, dakigula behintzat, 1729ko sermoian agertzen da behin, *daudeneri* forman, baina *peregrinoei* ere badago. Bestalde, Frantzisko Elizaldek 1735ean argitaratu zuen dotrinan *ayeri*, *bienaventuratueri* agertzen dira. Nolanahi ere, haren obran lau aldiz bakarrik erabiltzen du *-eri* (emandako adibide bakoitza birritan); aldiz, *-ei* eta *-ey* maiz erabiltzen du. 1745 osteko testuetan sarriago hasten da agertzen datiboko *-eri*: *gucieri* (1750eko Baztango eta Orrioko eliza-aginduetan) eta *guizonquieri*, *emaztequieri* (1750eko Baztango eliza-aginduetan). Badirudi, beraz, ezaugarri horrek balio diezagukeela, oro har, lehen goi-nafarrera modernoa zaharretik bereizteko.[1264]

Ezaugarria, dena dela, ez da sistematikoa eta txandaka ageri da aldaera zaharrarekin. 1750eko Baztango eliza-aginduaren bi aldaeretan beti *-eri* agertzen den arren, hamarkada berean Bortzirietako Mikelestorenak *-ei* erabiltzen du, beranduago Bonaparteren aginduz itzulitako Baztango dotrinetan bezala. Arestian aipatu dugunez, he-

[1264] Juan Irañetak Pedro Iterokori 1549an igorritako gutuneko euskarazko esaldian *eçuen scribatu bear berçeri* agertzen da. Pagolak (1995b: 284) *berçeri* pluraleko formatzat interpretatu eta, beraz, *-eri* pluraleko aldaera XVI. mendekotzat hartzen du. Dena den, esaldi horren kasuan *berçeri* mugagabea da, eta datiboko atzizkia *-ri*. Beriainek berak ere, *berçeri* dakar mugagabean: *yori fiatu bague negocio hau ez aynguiruey eta berceri*.

goaldeko goi-nafarreraz, Elizaldek bere dotrinan, esate baterako, *-ei* eta *-eri* bietariko formak darabiltza datibo plurala egiteko, baina bigarrena lau aldiz bakarrik. Gauza bera gertatzen da testu berriagoekin ere: Joakin Lizarragaren lanetan, Urizko dotrinan.

Caminok (2003b: 74) hegoaldeko goi-nafarreraren hego-mendebaldeko aldaeraren ezaugarritzat hartzen ditu datiboko atzizkien singularreko *-agi* eta pluraleko *-egi* aldaerak. Horiek ere lehen goi-nafarrera modernoarekin batera agertzen dira idatziz, 1745 aurretik ez baitira lekukotzen. Aurkitu dugun, ustez, lekukotasun zaharrenetakoa, hain zuzen ere, *Pasce oves meas* (Satrustegi 1987: 70-73) sermoi data gabean izan da. Lekukotasun horretan, nolanahi ere, *-egi* erabiltzen da mugagabe zein pluralerako. Bertatik atereak dira ondoko adibideak: *apetituegui*, *animegui*, *cargudunegui* pluralean —baina pluralean *gucieri*, *sandueri* ere badira— eta mugagabean *bategui*, *edoceñegui*, *Jesusegui*; aitzitik, singularrean *diabrueri* dago. Beste lekukotasun batzuetan egoera antzekoa da. Besteak beste, Martinez Morentingo bien sermoietan *-egui* agertzen da plural zein mugagabean; dena den, adibideak oso bakanak dira, eta ez da forma bakarra: *-i*, *-ri*, *-ari*, *-eri* ere ageri baitira (Lekuona 1973: 341). Orobat, XVIII. mendeko bigarren erdiko Goñerriko sermoietan *-egi* da nagusi (Camino 1999: 60-61); testu horietan ere mugagabeak eta pluralak dira, nahiz eta Caminok singulartzat hartu mugagabeak.

### *3.2.1.9. Soziatiboa*

Soziatiboaren markaren bi aldaera ediren ditugu goi-nafarreraz idatzitako testu zaharretan: *-rekin* eta *-reki*. Oro har, bi azpidialekto nagusiak, hau da iparraldekoa eta hegoaldekoa, bereizten dituen ezaugarritzat hartu izan da (Camino 2003b: 55).

Testuetan xeheki begiratzen badugu, *-rekin* aurkituko dugu Iruñean eta hortik ipar-mendebaldera agertzen diren lekukotasunetan; honatx lagin bat: *liquis orrequin* (Iruñea, 1535), *çurequin* (AresOtoi), *guztiarequin* (BeraGut), *ascorequin* (JElizaldeGut), *aperçebimenturequin* (LeitzAuzi). Caminok (2003b: 78) dioenez, garai berriagoetan Sakana erdialdean, Txulapainen, Ezkabarten, Atetzen, Odietan, Ultzaman eta Anuen *-rekin* agertzen da.

Hegoalderago egoera lausoagoa da: *-reki* aldaera nagusi den arren, testu batzuetan *-rekin* ez da ezezaguna. Iruñean bertan *orrequin* (Iruñea, 1535) badugu ere, *mayncuequi* (Iruñea,1563), *batequi* (Iruñea, 1593), *mutilarequi* (Iruñea, 1596) eta *orrequi* (Iruñea, 1612) ere agertzen dira prozesuetako esaldietan. Bestalde, Beriainek *gutiagorequi*, *çuenarequi*, *verarequi*, *desseoarequi*, *andiarequi* (Ber*Meza*) ditu, besteak beste; baina lan berean bi aldiz *-rekin* ere badauka: *guciarequin*, *andiarequin*. Elizaldek, aldiz, bere dotrinan sistematikoki darabil *-reki* aldaera: *zeurequi*, *pacienciarequi*, *devociorequi*, *comecacearequi*. Aldaera bera agertzen da, sistematikoki, 1609ko olerkietan ere. Badarik, 1729ko sermoia hegoaldeko goi-nafarreraz idatzirik egon arren, *-rekin* erabiltzen da beti: *obligacioarequin*, *escasiarequin*, *gutirequin*, *andiarequin*.

### *3.2.1.10. Instrumentala*

Intesgarria da instrumentala goi-nafarreraz, *-s* eta *-z* aldaerak agertzen baitira. Zuazok (1998a, 2003, 2006, 2014) goi-nafarreraren ezaugarri esklusibotzat hartzen

du instrumentalaren *-s* aldaera apikaria. Caminok (2009: 348) ere gisa horretako ezaugarritzat hartzen du.[1265] Beste lan batean, ordea, Caminok (2003b: 86-87) hauxe zioen txistukariaren *-s* eta *-z* aldaeren banaketa geografikoaz:

> Instrumentaleko atzizkiko txistukaria apikaria da Nafarroako franko alderditan; Bidasoaldeko Bortzirietan, Malerrekan, Bertizaranan eta Baztanen bizkarkaria erabiltzen da eta ertzetan baita Burundan eta Zaraitzu-Erronkarietan ere, nahiz Zaraitzun inoizka apikaria ere entzun daitekeen. Goiti-Areso-Leitza-Goizueta-Arano alderdian ere bizkarkaria erabiltzen da. Apikaria, berriz, Sakanan, Larraungo hizkera batzuetan, Basaburuan, Imotzen eta Ultzaman ageri da. Horien peko alderdian txistukaria bizkarkaria dugu hala Txulapaingo Nabatzen (*EI*), nola Ezkabarteko Makirriaingo XIX. mendeko kristau ikasbidean. Hego-nafarrerari dagokionez, Beriain eta Elizalde idazleek apikaria zerabilten soilik; Gesalazko idazkietan, apikariaz gainera bizkarkaria ere ageri da. Goñerrian, Oltza zendean, Ollaranen, Itzarbeibarren eta Eguesibarren ere apikaria zegoen. Artzibarren ere bai, baina *EI*-ko inkestetako erantzunetan bederen, bizkarkaria ez da ezezaguna; ekialdera, apikaria egiten da ia-ia beti Aezkoan. Esteribarren eta Erroibarren ere nagusi da apikaria, bizkarkaria duten adibideak ugari diren arren.

Garai zaharrenetara joz gero, testuak ez ditugu aipatu eskualde guztietakoak, baina egoera berdintsua dela dirudi. Aski zaharra da aldaera apikariaren lehen lekukotasuna; hain zuzen ere, dakigunez, XIII. mendean agertzen da aurrenekoz instrumentala, eta ordurako apikaria da: *gaiçes berme, ones berme* (*TAV* § 2.2.13). 1509ko Uitziko ezkontzako fedean ere apikaria lekukotzen da: *eta hon eta leyal nayçacan, ala dudanas eta duquedanas*. Hala ere, agiri berean *fedez* ere badago (ik. § 2.2.7.1.2). Txulapaingo Beorburuko 1536ko ezkontzako fedean *çuçaz* aldaera bizkarkaria agertzen da behin eta berriz. Aldiz, 1596an Eguesen apikaria dugu: *ones*. Artzibarren, *auçis* (Nagore, 1599) dugu apikariarekin; Arizkurengo ezkontza fedean, ordea, *çuçaz* dago, bizkarkariduna.

Egun bezala, testu zaharretan ere ezaugarria ez da goi-nafarreraren eremu osoan agertzen. Iruñetik ipar-ekialdekoa dirudien 1729ko sermoian eta 1743ko garizumako sermoietan sistematikoa da aldaera apikariduna. 1748ko garizumako sermoian ere apikaria da nagusi, baina salbuespen gisa *becatuz* ageri da. Aitzitik, Nafarroako iparmendebaldean ez da apikaria ezagutzen; esaterako, 1674-1676ko Berako olagizonaren gutunetan, Sanzberro etxalartarraren 1749ko dotrinan, 1750eko Elizondo eta Elbeteko eliza-aginduetan eta Goizuetako 1753ko sermoian beti bizkarkaria ageri da. Ezkabarteko Orrioko 1750eko eliza-aginduan ere ez da apikaria ageri; bai, aldiz, bizkarkaria. Aldiz, XVIII. mendearen bigarren erdialdekoa den Urritzolako bertsoan sistematikoki agertzen da aldaera apikaria (Satrustegi 1987: 50 eta hh. eta lan honetan E 5.2).

---

[1265] Egungo goi-nafarreran aldaera apikariak dukeen esklusibotasunaz gogoeta interesgarria dakar Zelaietak (2008: 188, 84. oin-oharra): «Hala ere, egungo nafarrerari Baztan-Bidasoa osoki kenduz gero, zein eremu geldituko litzaiguke Nafarroan? Kontuan hartu behar baita demografikoki nahiz soziolinguistikoki Baztan-Bidasoa euskara nafarraren bihotza dela gaur egunean. Nahiko genuke gure mintzairaren errealitatea bertzelakoa izan ledin, baina ez du ematen Nafarroako euskal aldaera dialektalen oraina eta (hurbileko) geroa Belatez bertze aldean idurika daitezkeenik. Hortaz, dialektologia sinkronikoaz den bezainbatean, ez dakusagu sobera garbi ezaugarri honek nafarrera determinatzeko omen duen esklusibotasun maila».

Gaur egun Leitza aldean aldaera bizkarkaria erabiltzen bada ere, XVII. mendeko Leitzako apaizaren auziko idatzian eta XVI. mendeko Aresoko otoitz zaharretan apikariaren adibide bakanak ditugu: *partes* Leitzan eta *gucis* Areson. Gainera, Aresoko 1609ko auzi bateko agirian *obeas*, *bates* eta *gueyaos* agertzen dira. Nolanahi ere den, ez da sistematikoa. Aresoko otoitzetan *sentenciaz*, *graciaz*, *deyez*, *guçiz*, *obraz*, *erdiz* ere badaude, eta Leitzako apaizaren auziko idatzian *faborez* agertzen da. Testu berriagoa izan arren, aipagarri bide da Bonaparteren ondareko Leitzako dotrinan bizkarkaria agertzen dela beti: *graciaz*, *guizonaz*, *obraz*, *deseoz*, *guciz*, *itcez*.

Bizigabeetako instrumentalaz gain, ezin aipatu gabe utzi bizidunetako *-zaz* / *-zas* edo *taz*. Testu zaharrenetan *-zas* eta *-zaz* dira bizidunen eta erakusleen instrumentalean agertzen den forma: *çuçaz* (EzkonArizk, EzkonBeorb, EzkonBaked), *nizaz* (FelBer). Beriainek *-zas* eta *-sas* dakartza: *ayhesas*, *ohesas*, *onesas*, *arças*, *guzas*, *nizas*, *cerzas*. XVIII. mendetik aurrera, 1729 sermoian *-tas* ageri da: *nitas*, *ontas*, *aietas*. Elizaldek *ontas* dakar dotrinan.

Ondoko mapan ikus dezakegu instrumentalaren bi aldaerek garai zaharrenetan zuketen hedadura.




**11. mapa**

Instrumentala Nafarroan 1750 aurretik

Mapan ikus daitekeenez, apikariaren eremua Nafarroako erdialde osoa da; ertzetan, aldiz, bizkarkaria dago. Edonola ere, testu zaharrek islatzen duten moduan, Nafarroako erdialdeko lekukotasunetan ohikoa da bizkarkariaren laginik aurkitzea.

### *3.2.1.11. Destinatiboa*

Destinatiboaz den bezainbatez, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean maizenik *-(r)etako* & *-(r)endako* erabiltzen da. Ezaugarri hori Nafarroa Garaiko, Nafarroa Behereko eta Zuberoako hizkeretan mintzo horiek duten hautu partekatutzat jotzen du Caminok (2013a: 108).

Ezbairik gabe, ezaugarri hori zaharra da, dagoeneko 1545ean Etxeparek badu eta. Goi-nafarreraz ere zaharra dela dirudi; izan ere, 1745 aurretik, oro har, destinatiborako agertzen den atzikia *-(r)etako* & *-(r)endako* da. Dena den, ez da dialektoaren eremu osoan agertzen, eta ipar-mendebaldeko hizkeretan *-(r)entzat* dago. Hain zuzen ere, Bortzirietako lekukotasunetan destinatiboa ez da maiz lekukotzen, baina *berezat* dugu bertakoa bide den Joseph Elizalderen gutunetan. Halaber, Leitzako 1626ko apaizaren auzian *verezat* agertzen da, Isastiren errefreauetako batean *darraiconarentzat* dugu eta Felipe IV.aren heriotzean abestu zen euskarazko koplan *gurezat* lekukotzen da.

Nolanahi ere den, 1745 aurreko gainerako testuetan *-(r)etako* & *-(r)endako* dago: *enetaco* dago 1576an Anotzibarren, *neretaco* dakar Isastik Karlos V.aren eta mandazain baten arteko elkarrizketan G, L eta S bertsioetan —*nerezaco* dago F bertsioan—, *guretáco*, *çuretáco* datoz 1609ko Iruñeko olerki sarituetan, *veretaco* 1656ko erromantzean. Beriainek ere beti *-(r)endako* dakar: *arimendaco*, *duenarendaco*, *becatariendaco*. Hurrengo mendekoa den Elizalderen dotrinan ere beti atzizki berori dugu: *apecendaco*, *ondrarendaco*, *provechuarendaco*. 1729ko sermoian ere *estitustenendaco* eta *alacoendaco* ditu, baina baita *Jaingoicoarenzat* ere.

Arestian esan dugunez, *-(r)etako* & *-(r)endako* ekialde zabaleko mintzoetan agertzen da, baina testu zaharretara joz gero, mendebaldean ere agertzen da: Juan Zumarraga durangarraren idatzietan *-endako* ageri da, *orrendaco*; eta Deba ibarrean *-endako* dugu (Zuazo 2006: 1012). Aldiz, Ipar Euskal Herrian Lapurdin ez da *-(r)etako* & *-(r)endako* erabiltzen, beti agertzen baita *-(r)entzat*, Gipuzkoan bezala. Bestalde, *-(r)entzat* eta *-(r)etako* & *-(r)endako* dituzte Etxeparek eta Leizarragak (Camino 2011b: 134, 129. oharra). Zuberoako lekukotasun zaharrei dagokienez, *-(r)etako* & *-(r)endako* eta *-(r)entzat* agertzen dira, baina *-(r)entzat* modernoagoa bide da,[1266] nahiz eta Oihenart eta Tartasek erabiltzen duten.

Egun, ezaugarri horren isoglosak Bortziriak gainerako iparraldeko goi-nafarreratik bereizten ditu, eskualde hartan eta Goizuetan *-tzat* baitago (Zelaietak 2008: 135). Bonaparteren ondareko Intza eta Leitzako dotrinetan ere beti *-(r)entzat* erabiltzen da. Apalauzaren (2012: 316-317) arabera banaketa garbia da: «*-tako* Imotz eta Basaburu Nagusi gehienean erabiltzen dute, baina *-tzat* morfemarekin txandaka; Larraunen eta Araitz-Betelun, aldiz, *-tzat* dugu kasu guztietan.»

Atzizki horretaz landara, inoiz destinatiboaren funtzioan genitiboa agertzen da, arkaismo gisa. Halere, ez dira asko aurkitu ditugun adibideak; zaharrena 1626koa da eta Leitzako apaizaren auzia dela-eta idatzitako testuan dago: *guztien notorio den*. Beharbada, mende berean, 1687ko Urdotzen izandako afera baten karietara jasotako lekukoen testigantzetan egitura bera ageri da: *gure Jangoicoac badauzqui castiguac*

[1266] Manu Padillak adierazi digunez (ahozko kom.), Zuberoako lekukotasunak aztertu ondoren, *-(r)entzat* modernoagotzat hartzeko arrazoiak ditu.

*escu libertatuen*. Hurrengo mendean *bapedraren vailerduca predicazaleac* agertzen da 1729ko sermoian eta *Murmurazalearen izanen da pagua betico sua* dago Obanoskoa den 1743ko bertsoan. 1735eko Elizalderen dotrinan zalantzazkoak diratekeen bi kasu ditugu: *Lembicico irurac Jangoycoaren eta berce laurac guretaco* eta *Arimaren eta gorpuzarendaco bear den gucia*. Badirudi bi adibide hauetan bigarrengoaren destinatibo markak lehenarentzat ere balio duela.

### *3.2.1.12. Prolatiboa*

Iparraldeko goi-nafarreraz, egungo mintzoek duten ezaugarrietako bat da prolatiboan *-tako* erabiltzea; halere, egun *-tzat* ez bide da arrotza (ik., esaterako, Apalauza 2012: 316-317).

Denboran atzera egin eta testu zaharrak aztertuta, ondoriozta daiteke *-tako* goi-nafarreraren ezaugarri berria dela, ez baita testu zaharretan lekukotzen. Aldiz, *-tzat* askotan ageri da; horren adibide dira, besteak beste, ondokoak: *senarçat* (EzkonZufia), *alaroçaçat*, *esposoçat*, *sposaçat* (EzkonUterga), *emazteçat* (EzkonOlatz), *cageençat* (Ihaben-Basaburua, 1584), *heroçat*, *Iaungoycozat* (Ber*Meza*), *Jangoicozat* (Serm1743-1).

XVIII. mendetik aurrera ugaritu egiten da *-tako* prolatiboan; halere, aurkitu dugun lehen adibidea 1626ko Orreagako artxiboko esaldi batean agertzen da: *senarretaco*. Gerora, 1729ko sermoian *laguntaco* dago, eta Larrasoañako sermoian *obispo eta principetaco* ageri da, baina data ezagunik gabeko sermoia da.

### *3.2.1.13. Motibatiboa*

Erdiguneko hizkeretan, motibatiboa egiteko atzizki orokorra *-gatik* bada ere, batzuetan *-gatika* eta *-gatikan* berrikuntza egin dute. Berrikuntza hori duten hizkeretan sistematikoki ageri ez denez, ezin jakin daiteke zehatz noiz hasi edo hedatu zen. Hala eta guztiz ere, goi-nafarreraz XVI. mendean ditugun adibide eskasetan *-gatik* da gehien erabiltzen den aldaera: *galceagatic* (Lesaka, 1549), *çergatic* (Osinaga, 1572), *emanagatic* (Urroz, 1582), *arengatic*, *arrengatic* (Iruñea, 1596), *çorragatic* (Muzki, 1597). Dena den, arestiko 1596ko Iruñeko esaldien agiri berean *-gatikan* agertzen da: *arengatican atera omen çuen echetic*. Lekukotasun hori da 1750 aurretik aurkitu dugun *-gatikan* adibide bakarra.

Antzeko egoera dugu lekukotasun berriagoetan. Oro har, *-gatik* da XVII. mendean erabiltzen den aldaera: *çerengatic* (Larrasoaña, 1606), *artuengatic* (Iruñea, 1612), *amoreagatic* (Altsasu/Burunda, c. 1648), *gugatic* (IsSal), *sugea illagatic* (IsEr), *orrengatic* (EErrom), *faltagatic*, *cegatic*, *zerengatic* (FelBer), *becatariengatic* (NafKat), *auçiagatic*, *diranengatic* (LeitzAuzi), *zugatic*, *cuidadoagatic* (JElGut).

Era berean, XVIII. mendean *-gatik* dauka Elizaldek, baina 1748ko sermoian *oriengatica* aurkitu dugu. Hain zuzen ere, 1750 aurretik *-gatika* duen adibide bakarra horixe da.

Bestalde, Manterolak (2015: 253) eredu eransleak deklinabidean duen bazterreko izaeraren adibidetzat ematen du, besteren artean, motibatiboan agertzen den *-akgatik* eta *-engatik* txandaketa. Hori dela eta, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean dugun egoerari begiratzea interesgarri dateke, bietarik baititugu. Arestiko adibidee-

tan absolutiboan ditugu Osinagako *çergatic*,[1267] Muzkiko *çorragatic*, Altsasu/Burundako *amoreagatic*, Isastiren *gugatic* eta *illagatic* eta *zugatic* eta *cuidadoagatic* Elizalderen gutunetan. Genitiboan *arengatic* eta *arrengatic* agertzen dira Iruñeko 1596koan, eta *becatariengatic* (NafKat). Aldiz, txandaka biak ageri dira Felipe Borboikoaren omenezko bertsoan eta Leitzako apaizaren auzian. Beriainek eta Elizaldek ere bietarik dute; utergarrarenak dira ondoko adibideak: *guregatic*, *çuengatic*, *guciengatic*, *becatuengatic*, *ceyñengatic*, *enegatic*, *denarengatic*, *eztuenarengatic* baina *sacrificioagatic*, *amoreagatic*, *argatic*, *andiagatic*, *çaradenagatic*.

### *3.2.1.14. Bizidunetako kasuak*

Nafarroako eta ekialdeko hizkerek komunean duten berrikuntza da bizidunetako kasu marketan, *-ga-* morfema orokorraren ordez, *baita-* erabiltzea. Ezaugarri hori lehen testuetatik agertzen da, eta dagokion izen sintagma genitiboan zein absolutiboan egon daiteke.

Goi-nafarreraz idatzitako testu zaharretan bi formak agertzen dira, hasieratik. Ezagun denez, *baita-* daraman egitura *-ga-* duena baino berriagoa izan arren, lehen lekukotasunetik bertatik lekukotzen da: *erregue baytaric* (ZalbGut), *E[…]dua baytan* (NafKat).

Hala eta guztiz ere, XVI. mendean oraindik *-ga-* forma orokorra lekukotzen da: *Maria virgiñaganic*; *Spiritu Sandu yaunagan*, *catholicoagan*, *resurrectioagan* (AresOtoi). Aldiz, XVII. mendean, Beriainen obretan esate baterako, bi formak erabiltzen dira. Utergarraren obretan ugari dira *baita-* dutenak: *Mariaren baytatic*, *bere baytan*, *Iaungoyco eguiazcoaren baytan*, *Virgina Mariaren baytatic*, *neure baytan*; baina ez dira *-ga-*dunak falta: *guregana*, *berceanganic*, *arenganic*, *aytarengana*.

1699an Joseph Elizaldek idatzitako gutunean adibide bakarra dugu eta bertan *-ganik* forma arkaikoa ageri da: *zureganic*. Mende hasierakoa den Zannettiren kredoan, ordea, *baita-* forma bakarrik agertzen da: *Jaun poderosoaren vaytan*, *Andre Dona Mariaren vaytatic*.

XVIII. mendean egoera antzekoa da. Elizaldek 1735eko dotrinan egitura zaharra eta berria, biak batera darabiltza; bereak dira hurrengo adibideak: *Virginarenganic*, *zuregana*, *Jangoycoaren baytan*, *gueuren baytan*. Mende hartako lehen erdiko sermoietan ere *baita-* agertzen da, baina *-ga-* erabiltzeko joera handiagoa da: *Jangoicoaren baitan* (Serm1743-2), *veregandic* (1748ko sermoia).

Aztertu ditugun hiru mende haietan joera bera ikusten da goi-nafarrerako testuetan. Ekialde zabaleko berrikuntza komuna garai guztietan lekukotzen da, maiz lekukotu ere, baina *-gan* forma zaharra duten adibideak ugariak dira.

Amaitzeko, ohartaraz dezagun ez dugula inoiz aurkitu *baita*-ren gainean eraikitako adlatiboa, *baitara* alegia; bizidunen adlatiboa lekukotzen den kasu guztietan *-gana* lekukotzen da: *aur noble onengana* (HenBer), *ene anima Jayncoagana beldurrequi partituric* (Amendux). Geroagokoa den Lizarraga Elkanokoak ere *baita-* gisakoak nasaiki erabiltzen ditu, baina ez dugu *baitara* daraman adlatiborik aurkitu, beti *-gana*

[1267] Dena den, *çergatic* kasu honetan gramatikalizaturiko forma da.

erabiltzen du. Mendiburuk, aldiz, badu *baitara*, baina ez beti, *-gana* ohikoagoa baita bere idatzietan.

### *3.2.1.15. -kotz*

Nafarroako erdigune-ekialdeak Zuberoa eta Nafarroa Beherearekin partekatzen duen berrikuntza da helburuzko *-kotz* (Camino 2013a: 112); halere, gipuzkeraz ere agertzen da atzizki hori: *Resurrekziokoz*, *egiterakotz*, *publikorakotz* ditu Otxoa Arinek. *Refranes y Sentencias* errefrau bilduman ere bada adibiderik: *oñak otz elexarakotz / bero ezkontzarakotz* (142). Caminok (2011b: 123) dioenez, Lapurdiko Aturrialdean eta Nafarroa Beherean ohikoa da *-kotz* entzutea, Hazparnealdean eta Bidarrain *-koz*, Erronkaribarren eta Zuberoan bezala.

Nafarroa Garaiari dagokionez, dugun lekukotasun zaharrena XVI. mendekoa eta Zufiko ezkontza fedean agertzen da: *eguitecoz*. XVII. mendean Bortzirietan lekukotzen zaigu: *olaracoz* (BeraGut), *zertacoz* (JElGut). Hala ere, besteak beste, Beriainek ez du erabiltzen eta Elizaldek ere ez du halakorik 1735eko dotrinan, baina badirudi XVIII. mendetik aurrera gehiago erabiltzen dela. Horren adibide dira, besteak beste, ondoko lekukotasunak: *confessatcecotz* dakar Obanosko bertsoak; *onetacoz*, *eracustecoz*, *tentazecoz*, *botazecoz*, *onetaracoz*, *beticoz* ditu 1748ko sermoiak; *artacotz* Orrioko 1750eko eliza-aginduak eta *seculacotz*, *puebloarequicotz*, *huntaracotz* Baztangoak.

Azken adibideetan grafiari esker erraz da igartzen ahoskera afrikatua dela; aldiz, 1748ko sermoian ezin jakin, ez baitu afrikaria bereizten. Berako gutunen kasuan, afrikariak bereizteko joera dago, baina beti egiten ez duenez ezin jakin afrikari ala igurzkari den, eta Joseph Elizalderen kasuan ez du bereizketa egiten.

### *3.2.1.16. Ablatiboa*

Oro har, euskarazko testu zaharretan ablatiboa egiteko zenbait forma aurki daitezke; batetik, inoiz orokorra izan den *-rik* dago; eta, bestetik, mendebalde zabaleko berrikuntza dirudien *-tik* daukagu.[1268] Inoiz *-ti* hutsa ere agertzen da. Horretaz gain, erdialdeko hizkeretan *-tika* eta *-rika* agertzen dira; halaber, horietan oinarritutako *-tikan* eta *-rikan* maiz lekukotzen dira (ik. Lakarra 1984). Lakarrak (2016: 186) morfemen forma kanonikoa aztertu eta ondorioztatzen du *-ti* → *-ti* + *ka* → *-tika* → *-tik* izan dela bilakabidea. Ondoko lerroetan goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean dugun egoera deskribatuko dugu, singularra eta plurala bereiriz.

Ablatibo singularrari bagagozkio, *-tik* aldaera da hasieratik dagoena: *aubecotic* (Lekunberri, 1551), *asentutic* (Ezkurra, 1569), *ertetic* (AresOtoi) baititugu XVI. mendean. XVII. mendean, *-tik* darabil Beriainek: *agotic*, *cerutic*, *lepotic* (Ber*Meza*). Aldaera bera darabil Joseph Elizaldek bere gutunetan: *ortic*, *escutic*. XVIII. mendean ere *-tik* da nagusi: *agotic* (Serm1729), *becatutic*, *copetatic* (El*Dot*).

Bizidunez den bezainbatez, testu zaharrenetan, maiz, *-rik* agertzen da: *erregue baytaric* (ZalbGut). Beriainek *baytaric* inoiz edo behin badakar ere, bizidunen kasuan *baytatic* ere badu. Halere, bizidunekin usuenik *-ganik* zaharra erabiltzen du Beriai-

[1268] Mendebaldeko testuetan *-reanik* ere agertzen da.

nek: *arenganic*, *ceñenganic*, *Iaungoycoarenganic*, etab. Atzizki bera agertzen da Aresoko otoitzetan: *virginaganic*, *Mariaganic*. Halaber, Joseph Elizalderen gutunetan *zureganic* agertzen da. XVIII. mendean Elizalderen 1735eko dotrinan bizidunekin *-ganik* erabiltzen da, *sanduarenganic* adibideak erakusten duenez.

Eskura ditugun lekukotasunetan, ablatiboko *-ti* duten adibide bakarra: *escuti* (Serm1743-1). Aldiz, inoiz edo behin *-tika* & *-dica* erdiguneko berrikuntza zaharra agertzen da: *andica* (Zannetti), *ortica* (Atarrabia, 1647), *cerutica* (ObanosBer), *andica*, *nondica* (1748ko sermoia). Halere, aldaera hori ez da maiz erabiltzen, Beriainek eta Elizaldek, esaterako, ez dute.

Pluralaz den bezainbatez, Nafarroako lekukotasunek erakusten dutenez, goi-nafarreraz *-etarik* edo *-etarika* dira hasieran erabiltzen diren formak; gainera ia eremu osoan erabiltzen dela dirudi: *escuetaric* (EzkonBaked), *gaiçetarica* (AresOtoi), *illetaric* (NafKat), *etaric* eta *gaizetaric* (BeraGut), *nobletaric* (Perotxegi) eta *goietaric*, *gucietaric* eta *amartaric* (Serm1729).

Caminok dioenez (2013a: 117), Nafarroa Garaiko mendebaldeak *-etatik* berrikuntza egin du. Dena den, eman ditugun lekukotasunetan ikusten denez, XVI. mendean ez da agertzen Nafarroako mendebaldean dauden Areso eta Bakedaon. XVII. menderako, ordea, *-etatik* dakar Beriainek *-etarik* formarekin batera; baina utergarraren dotrinan *-etatik* da nagusi. XVIII. menderako, badirudi *-etatik* dela forma bakarra Nafarroako mendebaldean: Elizaldek dotrinan *-etatik* dakar beti, eta orobat beranduago Utergako dotrinan (Ondarra 1980), Markotegiren 1777ko sermoian (Knörr 1992) edo Lizarrerriko Martinez Morentingo bien sermoietan (Lekuona 1973) *-etatik* dago, behin *avetaric* badugu ere; Goizuetako 1753ko sermoian *-etatik* dugu (Reguero 2015b). Bonaparteren ondareko Uharte-Arakilgo dotrinan *-etati(k)* dago beti. Bortzirietan, Etxalarko Sanzberroren dotrinatxoan bietariko formak ageri dira: *gastuetaric*, *hiletaric* baina *gastuetatic*. Ekialderantz joz gero, Baztanen *-eta(r)ik* aurkitzen dugu XVIII. mendean (ik. Lekaroz 2006) eta Joakin Lizarraga Elkanokoak ere *-etaik* (< *-etarik*) darabil usuenik, nahiz eta *-etatik* ere baduen, inoiz edo behin.

Ondorioz, esan daiteke *-etatik* aldaera hego-mendebaldetik sartu zela Nafarroara, eta beranduago ipar-mendebaldean ere zabadu dela ezaugarria.

### *3.2.1.17. Adlatiboa*

Goi-nafarrerazko lehen lekukotasunetatik *-ra* eta *-etara* dira adlatibo singular eta pluralerako erabiltzen diren postposizio markak. Ondokoak adibide: *eçinan etorrico onera* (Iruñea, 1594), *ardançera* (Erreta, 1575), *çeruetara*, *infernuetara* (AresOtoi), *templora* (Ber*Meza*).

Nolanahi ere, badira, gutxi izan arren, *-*rada* batetik datorren *-rat* markaren aztarnarik: *orrat* (Barasoain, 1593), *onat* (Irunberri, 1629), *alderat* (BeraGut), *orrat* (Untzue, 1691), *onerat* (Perotxegi), *calvariorat* (ObanosBer), *hotarat* (Baztango 1750 eliza-agindua). Lekukotasunen hedadura geografikoa ikusirik, badirudi antzina orokorra izan zela, goi-nafarreraz bederen.

Bestalde, hurbiltze adlatiboaren adibide bat dugu Larraungo Etxarriko 1614ko esaldian: *araunça*. Amaitzeko, izen bereziekin *-a* agertzen da Adiosko 1650eko *Garessa* adibidean.

*3.2.1.18. Atzizkiak*

Jarraian goi-nafarrera arkaiko eta zaharreko testuetan agertzen diren eratorpen atzizki batzuk iruzkintzen dira. Helburua ez da erabiltzen diren atzizki guztien zerrenda egitea, baizik eta lexikoaren eta hitz eratorrien historia egiteko interesgarri izan litezkeenak iruzkintzea. Atzizkien adibideak emateko orduan, gaurko grafian eta biluzik eman dira, kasu marka eta postposiziorik gabe.

*-duria*

Oro har, ez dirudi atzizki hagitz emankorra denik, maiz hitza osorik, atzizki eta guzti, mailegatu baita: *sabiduria* dute Beriainek, Elizaldek eta 1743ko 2. sermoiak eta Isastiren errefrauetan gaztelaniatik mailegaturiko *mercaduria* agertzen da. Hala eta guztiz ere, inoiz euskarazko erroarekin elkartzen da atzizkia, Elizaldek *jaquinduria* baitakar.

*-gi / -ki*

Adjektibo bat oinarritzat harturik, moduzko adberbioak sortzeko atzizkia da: *ongui* (ZalbGut, Altsasu/Burunda, c. 1648, ImarKop, EzkOl, AldOl, NafKat, JElGut, Serm1729, Ber*Meza*, Ber*Dot*, El*Dot*), *obequi* (Zuriain, 1613; Beriain, Serm1729, Serm1743-2, El*Dot*), *gayzqui* eta *galaynqui* (Ber*Dot*). XVIII. mendetik aurrera, adibide gehiago aurki daitezke: *licitoqui*, *particularqui*, *ciertoqui*, *chuxenqui, igualqui*, *dignoqui* (Serm1729), *fuertequi* (Serm1729, Serm1743-2), *galanqui*, *ordinarioqui*, *ligeroqui*, *comunqui*, *milagrosoqui* (El*Dot*). Ikus daitekeenez, azken zerrendako hitz guztietan, erroa mailegu berria da, *chuxenqui* adibidean salbu. Ik. *-kiro* eta *-ro*.

*-gile*

Izenak oinarri harturik, egiletasuna adierazten duten izenak sortzeko atzizkia da. Nafarroako testu zaharretan aski emankorra dirudi: *gaiztoguille* (Arribe,1564), *humeguile* (Areso, 1608), *bearguile* (IsEr), *ichuraguil(l)e* (Goizueta, 1633), *otoyzguille* (Ber*Dot*).

*-(i)le*

Aurrekoaren pare, egiletasuna adierazten duten izenak sortzen ditu, aditzari loturik. Emankortasun handikoa da testu zaharretan: *erralle*, *eguille* (Ber*Meza*), *emalle* (Goizueta, 1633).

*-keria*

Atzizki hau adjektiboari lotzen zaio, eta izenak sortzen ditu. 1745 aurretik ez da adibide askorik, baina XVI. menderako bada: *falçuqueria* (Puiu, 1596), *gaistaqueria* (El*Dot*).

*-kide*

Pertsonekin erlazionaturiko izenak sortzeko erabiltzen da, baina ez gaude ziur zeri lotzen zaion. Ditugun bi adibideetan, bigarrengoan izenari lotzen zaio, baina lehenengoan ez postposizio sintagman bide dugu, baldin eta Lafonen (1935, 1936) eti-

mologia zuzena bada: *adisquide* < 'adinez kide' (Aroztegi, 1656; Amendux, JElGut, Ber*Meza*, Ber*Dot*, El*Dot*), *icenquide* (Ber*Meza*).

*-kiro*

Goi-nafarreraz moduzko adberbioak sortzeko atzizki biziki emankorra da. Lehen lekukotasuna 1538an agertzen da Beorburuko ezkontza fedean: *lealquiro*. Beriainek maiz erabiltzen du gaztelaniazko *-mente* atzizkiaren ordaintzat: *cruelquiro, liberalquiro, principalquiro.*

*-mentu*

Gaztelaniaren *-miento* atzizkiaren euskal ordaina da. Hitzak osorik, eta ez atzizkia bera, mailegatu dela dirudi, *juramentu* (Arribe, 1564), *sacramentu* (Areso, 1608; Beriain), *pensamentu*, *atrebimentu*, *cumplimentu* (Ber*Meza*) gisako adibideetan ikusten denez. Dena den, horiezaz landa, inoiz *-mentu* hitz berriak sortzeko modu beregainean euskaraz erabili izan dela dirudi: *parcamentu* (Zannetti), *prometimentu* (IsSal), *eçagumentu*, *adimentu* (Ber*Meza*), *urriquimentu* (Ber*Meza*, Ber*Dot*, Elizalde*Dot*), *ezaumentu* (Elizalde*Dot*). Ohart gaitezen guztietan aldaera ahoskabeduna erabiltzen dela. 1750ean, *movimendu*, *desordenamendu*, *aitormendu*, *manamendu* ditugu Baztango eliza-aginduan.

*-ro*

Aditzondoak sortzeko erabiltzen den atzizkia da; testu zaharretan zenbait adibide aurkitu dugu: *falsoro* (Etxauribar, 1598), *goçóro* (EzkOl), *xauro* (AldOl), *vanoro* (NafKat), *bidero* (Ber*Dot*), *beroro* (Irurita, 1660). Ik. *-gi/-ki* eta *-kiro*.

*-tasun*

Adjektiboak hartuz, izen abstraktuak sortzen dituen atzizkia da; aski emankorra dirudi, XVII. mendetik aurrera bederen: *anditasun* (Larrasoaña, 1606; Isasti), *eztitasun* (IsSal), *prestutasun*, *edertasun* (Perotxegi), *ondasun* (Beriain, Serm1729, El*Dot*, Serm1743-1, ObanosBer), *arguitasun* (Serm1743-1, Serm1743-2), *illuntasun* (Serm1743-2), *damutasun*, *adisquidetasun*, *arguitasun* (Ber*Meza*, Ber*Dot*), *garvitasun* (Ber*Meza*). Beriainek bitan *garvitazunarequi* dakar, baina ez dakigu aldaera den ala hutsa. Elizalderen dotrinakoak dira ondoko adibideak: *dulzetasun*, *ontasun*, *itsusitasun*, *garbitasun*, *abrastasun*.

*-tza / -tze*

Mitxelenak (1953: §570) erakutsi zuenez, toponimian ohikoa da *-tza / -tze* txandaketa aurkitzea, eta biak jatorri berekoak izan litezkeela proposatu genuen (Reguero 2013: 435-436). Erdi Aroko toponimoez landa, Erretako 1575eko esaldian *ardançea* eta *ardançera* ditugu eta 1743ko lehenengo sermoian ere *ardançeetaco* ageri da. Horiezaz gain, mendebaldeko hizkerek *-tza* duten zenbait hitzetan *-tze* dugu Nafarroa gehienean: *(h)erio(t)ze* duten Felipe IV.ari kantatutako koplak, katixima zatiek, Beriainek eta Elizaldek; *vici(t)ce* dute katixima zatiek, Elizaldek eta Beriainek. Azken bi horiek *jayoce* & *jayoze* 'jaiotza' dute. Nafarroako mendealdean *-tza* ageri da: Aresoko otoitz zaharretan *vicitce* dugu,[1269] baina baita *viçiça*, *erioça*, *erioçaco* ere. Isastik *viciza* darabil.

[1269] Aresoko otoitz horietan *esperançea* ere badugu, beharbada analogiaz *-tza* > *-tze* eginda. Gainerako testu nafarretan *esperanza* dute Isastik, Beriainek, 1729ko sermoiak eta Elizaldek.

*-za(i)le*

Testu zahar nafarretan oso emankorra bide da atzizki hau. Aditzari loturik, izena sortzeko erabiltzen da atzizkia: *edosquiçale* (Etxarri, 1614), *edequiçalle*, *edequizalle* (Lesaka, 1626), *criaçale*, *salvaçalle*, *predicaçalle* (Ber*Meza*, Ber*Dot*), *eguinçale*, *emançalle* (Ber*Meza*). Aditzarekin elkartzen ez den adibide bakarra aurkitu dugu: *vitartecoçale* (Ber*Meza*, Ber*Dot*).

### 3.2.2. Aditz morfologia

Azpiatal honetan goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean aurki ditzakegun aditzaren ezaugarri nagusiak arakatuko ditugu. Hasteko, aditz jokatugabeekin (§ 3.2.2.1) gertatzen diren kontu interesgarriez arituko gara eta, ondoren, aditz jokatuekin (§ 3.2.2.2) gertatzen denaz jardungo dugu.

#### *3.2.2.1. Aditz jokatugabeak*

Aditz jokatugabeez den bezainbatean, aipagarri iruditu zaizkigu indikatibokoak ez diren perifrasietan aditzoina edo partizipioa erabiltzen den begiratzea (§ 3.2.2.1.1) eta partizipio pleonastikoak (§ 3.2.2.1.2). Horren ondotik, aditz-izenez bi hitz esango ditugu (§ 3.2.2.1.3).

Aipaturiko ezaugarri horiek ez dira, inondik inora, goi-nafarreraren bereizgarri esklusiboak eta inguruko dialektoetan ere agertzen dira. Dena den, hizkeraren ezaugarri indartsuak dira.

##### *3.2.2.1.1. Partizipioaren eta aditzoinaren erabilera*

XVI. mendetik aurrera erdialde eta mendebaldeko hizkeretan partizipioak aditzoinaren lekua hartu zuen perifrasi zaharretan eta indikatibozkoak ez diren perifrasietan (Mounole 2007, 2011, 2014; cf., halaber, Lakarra 1983). Nafarroa ekialdearen eta mendebaldearen artean dagoenez, interesgarri dirudi testu zaharrek mendez mende erakusten duten argazkiari begiratzea.

Lehenik eta behin, kontuan izan behar dugu *-i*-z amaitzen diren partizipioek[1270] eta *-tu*-z amaitzen direnek ez dutela berdin jokatu euskararen historian. Laburbilduz, *-tu* dutenetan luzaroago mantendu da oposaketa erdialdeko eta mendebaldeko hizkeretan (Mounole 2007). Mounolek (2007: 85) zenbakitan islatzen du nafar testuen egoera:

> Goi Nafarrera erdialdeko testuetan, *-i*-rik gabeko aditzoinak agertzen zaizkigu han hemenka. Partizipioa *-i*-z duten aditzoinak konparaturik (hots, *-i* > Ø tipokoak), ondoko proportzioak ditugu: Ezkurra (1610) **edin* aditzoin 1 vs 0 partizipio, Elizalde (1610) **erazan* aditzoin 1 vs 0 partizipio, Beriain (1621) **ezan* 2 aditzoin vs 11 partizipio, **erazan* 3 aditzoin vs partizipio 1, Elizalderen gutunak (1693, 1699) **ezan* aditzoin 1 vs partizipio 1, Elizalde (1735) **edin* aditzoin 1 vs 3 partizipio eta **ezan* aditzoin 1 vs 4 partizipio, Ororbiako predikuak **ezan* 4 aditzoin vs 4 partizipio, Mo-

[1270] *Utzi* aditza da salbuespena; aditz horrek ezberdin jokatzen du, aditzoina mantentzen duten dialekto arkaikoetan (Etxepare, Leizarraga...) ere *-i*-rekin agertzen baita; ik. Urgell 2018: 788.

rentin zaharra **edin* aditzoin 1 vs 0 partizipio, **ezan* 6 aditzoin vs 4 partizipio, Morentin gaztea **ezan* aditzoin 1 vs 2 partizipio. Datu horiek erakusten digute, *-i*-rik gabeko aditzoinak oraino erabiltzeagatik, galtzen ari direla, eta agertzen zaizkigun soilak salbuespenak direla. Nafarrerazko corpusaren aditzoinak batera harturik, ikusten dugu *-i* > Ø pairatu dutenek aditzoinen % 5,2a baizik ez dutela errepresentatzen, hots *-tu* > Ø duten aditzoinak direla nagusi % 94,8an. Gehitu behar dugu ez dugula desberdintasun nabarmenik ikusten XVII eta XVIII. mendeko testuen artean, bi gizaldi horietan *-i* > Ø berdintsu erabiltzen baita, salbuespen gisa alegia.

Jarraian testuz testu aurkeztuko dugu egoera goi-nafarreran:

XV-XVI. mendeetan *-tu* duten aditzekin aditzoina mantentzen da ditugun adibide guztietan: *alegra zaite* (ZalbGut), *ar bizate* (Kondestable), *parca derozola* (IrañGut), *arr eçan* (Aizkoa, 1567). Aldiz, *-i* duten aditzen lekukotasun zaharrenak Aresoko otoitzetan aurkitu ditugu, eta bertan, *-tu* dutenetan aditzoina erabiltzen da indikatibotik landako perifrasietan: *sanctifica bedi*, *cumpli bedi*, *barca iazquiguçu*, *converti içaçu*, *çaquizgula valia*. Aitzitik, *-i*-duen kasu bakarra dugu eta partizipioa ageri da: *etorri bedi*, baita, espero moduan, *utzi*-rekin ere: *ezcaiçaçula juci*, *ezcayçaçula jutcy.* Jakina, *egin* laguntzailearekin ez da aditzoina erabiltzen: *erregutu eguiozu*, *eracusi eguiguçu*.

XVII. mendean, Beriainek sistematikoa du bereizketa *-tu*-z bukatzen den aditzetan: *aprovecha gaytecen*, *adivina çac*, *considera diçagun*, *barca drazquiguçu*… Aldiz, *-i* duten aditzekin ez du beti bereizten, eta ugariago dira *-i* partizipioa mantentzen duten adibideak (ik. E § 2.2). Antzeko egoera dute mende bereko hegoaldeko goi-nafarrerako beste lekukotasunek ere: *estesaçula bana* (Artaxoa, 1607), *itçul dáyte* (EzkOl), *oroyt çaite* (AldOl). Iparraldeko goi-nafarrerako Joseph Elizalderen gutunetan *yiuz diezazula* eta *icasi dezatela* ditugu.

Nafarroako mendebaldean, lekukotasunak urriak dira: Sakanan *engaña deçala*, *engaña dezela* (Altsasu / Burunda c. 1648) agertzen dira[1271] eta Frantzisko Elizaldek *-tu*-dun aditzekin beti erabiltzen du aditzoina, *-i*-dutenekin aldiz ez (ik. E § 3.1).

Laburbilduz, *-tu*-z amaitzen diren aditzekin aditzoina erabiltzen da, nagusiki, indikatibotik landako perifrasietan; aitzitik, XVI. menderako *-i*-z amaitzen direnekin aditzoina eta partizipioa azaltzen dira; iduriz, hasieran mendebaldean, eta XVII. mendetik erdialdean, eremua hartuz doa partizipioa.

#### *3.2.2.1.2. Partizipio pleonastikoak*

Erdialdeko euskalkiek duten ezaugarrietako bat da *-n* eta *-l*-z amaitzen diren partizipioetan oinarrituriko forma pleonastiko berriak eratzea. Goi-nafarreraz ezaugarri hori XVII. mendeaz geroztik agertzen da.

Ez da ezaugarri sistematikoa, inolaz ere, eta ez da testu guztietan ageri. Dena dela, dialektoaren eremu gehienean hedatua bide dago partizipio pleonastikoa: *içandu*, *izandu* dugu Leitzako apaizaren auzian eta *ucandu* dakar Zannettik euskarazko kredoan. Beriainek *izandu*, *egondu*, *jaquindu* eta *ibildu* ditu; aldiz, *ibili* ez du inoiz erabiltzen, *izan* oso bakan eta nagusiki *egon* idazten du. Aurkitu dugun adibide zaharrena 1594ko Iruñeko esaldi batekoa da: *uquindu baçindu*. Bi urte beranduago,

[1271] *Utzi* aditzarekin *uzi dezala* daukagu prozesu berean.

1596an, *içandu zuen* jaso zen Iruñean bertan, eta mendearen bukaeran *içandu* dago 1599an Artzibarko Nagoren. Ematen du, beraz, Iruñean eta inguruan sortutako berrikuntza dela.

Egungo datuetan oinarriturik, Erdoziak (2008: 185) erakusten du Bidasoaldean eta Ultzaman baden berrikuntza hau ez dela Baztanera iritsi. Hain zuzen ere, Baztango eliza-aginduetan beti ageri da *izan*.

Ikus dezakegunez, XVII. mendearen lehen erdirako aski hedatua zegoen aldaera pleonastiko hori; eta, esan dugunez, erdiguneko hizkerek egindako berrikuntza da. Zehatz esanda, *-ndu* amaiera duten partizipioak Gipuzkoan (cf., esaterako, Reguero & Gómez 2016) eta Nafarroan XVII. mendearen hasieratik ditugu. Iparraldean, ordea, Lapurdiko kostaldean *izatu* partizipio pleonastikoa agertzen da; lehen aldiz Materrak erabiltzen du, baina ez 1617ko argitalpenean, 1623ko berrargitalpenean datozen testu erantsietan baizik.[1272]

### *3.2.2.1.3. Aditz-izenak*

Euskararen dialektoek zenbait atzizki erabili dituzte aditz-izenak sortzeko. Lekukotasun zaharrenetan ikus daitekeenez, *-te* da zaharrena eta inoiz orokorra izandakoa, baina lehen testu idatziak agertzerako egoera dialektalizaturik dugu, eta *-tze* eta *-etan* ere agertzen dira lekuaren arabera (Urgell 2006).

Urgellek (2006) erakusten duenez, *-tze* aditz-izenak sortzeko atzizkia erdiguneko hizkerek egindako berrikuntza da; beraz, interesgarri izan daiteke goi-nafarrerazko lekukotasun zaharrei xeheki begiratzea atzizkiaren agerreraren kronologia finkatze aldera.

Goi-nafarreraz idatzitako testuetan, *-r* eta *-l* bukaera duten aditzekin *-te* zaharra gordetzen duten adibide gutxi dago: *iracurten* dugu Pater noster txikian, *eçarten* Elizalderen 1609ko olerki sarituan eta *erortera* dakar Beriainek bi obretan, baina Aitagurean bakarrik, gainerakoan *erorcen* eta *erorceco* baititu, eta *ybilten* agertzen da Orokietako 1578ko esaldi batean. Hemendik ateratzen den ondorioa da, beraz, aski indartsu hedatu zela *-tze* lekukotasunak agertzen hasi aurretik.

Horrezaz landara, iparraldeko goi-nafarreraz idatzitako testu zaharretan *-ite-* mantentzen da: *izaiten*, *edireiten* (BeraGut), *içayteco*, *emayten* (EzkonBeorb), *emayten* (AresOtoi), *izaiteaz*, *esaiten*, *emaiten* baina *izateco*[1273] (ElizalGut), *emaiteco* (Sanzberro). Nafarroako hegoaldean aurkitu dugun adibide bakarra Zufiko ezkontza fedekoa da, bertan *emayten* agertzen baita, baina *ematen* eta *içaten* ere badaude. Gainerakoetan *-te-* daukagu: *izateco* (Ber*Meza*), *izateco* (El*Dot*) eta *içateco* (EzkonUitzi).

Ziurrenik *-i* duten aditzen partizipioaren emankortasunaren galerak badu zer ikusirik ondoko fenomenoarekin. Izan ere, XVII. mendeaz geroztik, erdiguneko dialektoetan agertzen den ezaugarria da *-i*-z bukatzen diren aditzen aditz-izenak sortzeko partizipioa oinarri hartzea. Lapurdin Materrak *aracitcen* dakar, baina *arazten* ere badu 1617an, eta Etxeberri Ziburukoak *sarraracitceco* eta *etsitzen* ditu (Camino 2013a:

---

[1272] Izatez, Materrak *nahi izatu* lokuzioan bakarrik erabiltzen du forma pleonastikoa, eta 1617koan ez du lokuzio hori erabiltzen.

[1273] Dena den, ez da ziurra 'izateko' den ala toponimoa (ik. § 2.3.6.2 eta batez ere dagokion oin-oharra).

121). Mendebalderago, Araban Lazarragaren eskuizkribuko Sasiolakoaren bertsoetan *ecarricea* agertzen da, baina eskuizkribuak duen gisa horretako adibide bakarra da. Gipuzkoak *ausitcen* eta *utcitcen* ditu Irazustak, XVIII. mendearen lehen erdian.

Goi-nafarreraz usu ageri da ezaugarri hori. Esate baterako, Beriainek erabiltzen ditu *jancicen*, *ercicen*, *jarricen*, *jaycicen*, *assicen* gisakoak. Dena dela, partizipioan bi silaba edo gutxiago dituzten aditzekin egiten duela dirudi, *erdesten* eta *egosten* baititu. Alabaina, Elizaldek *onesicen* eta *erdechicen* formak ditu, baina gero *austen* mantentzen du. 1729ko sermoian *eracusicen*, *erabaciten*, *egozicea* lekukotzen dira.

Iparraldeko goi-nafarrerazko testuen luzera hegoaldekoena baino laburragoa denez, ez dugu 1745 aurreko testuetan partizipioaren gainean eraikitako aditz-izenik aurkitu. Dena dela, ez dirudi ezinezkoa denik, beranduagoko testuetan, Uharte Arakilgo dotrinan esaterako, *jarricen* dugu, baina baita *eraguzten* 'erakusten' ere.

Emankortasun eta hedadura gutxiago du aditz-izenetako *-nten* amaierak: *emanten* eta *eramanten* agertzen dira 1729ko sermoian, *emanten* dugu Larrasoañako sermoian eta *inten* XVIII. mendeko *Pasce oves meas* sermoian (Satrustegi 1987). Testu berrixeagoetan Lizarraga Elkanokoak eta Mendiburuk *emanten* bana dute. Baztango 1791ko sermoian ere *emanten* ageri da (Lekaroz 2006). Ez ditugu lekukotasun asko, baina dirudienez XVIII. mendearen erdialdetik aurrera agertu zen.

### *3.2.2.2. Aditz jokatuak*

Aditz jokatuen azterketa egiteko, zenbait ezaugarri iruzkinduko ditugu; beraz, aditz trinkoez (§ 3.2.2.2.1), *izan* (§ 3.2.2.2.2) eta **edun*-en (§ 3.2.2.2.3) adizkien formez, *-i(n)-* erroa eta **eradun* aditz laguntzaileen banaketaz (§ 3.2.2.2.4), indikatiboaz landako NOR-NORI-NORK saileko aditz laguntzaileez (§ 3.2.2.2.5), **iron* aditz laguntzaileaz (§ 3.2.2.2.6), iraganeko *-n*-az (§ 3.2.2.2.7), aoristoaz (§ 3.2.2.2.8), geroaldiaz (§ 3.2.2.2.9), **edun* aditzaren iraganeko adizkiez (§ 3.2.2.2.10), bigarren pertsona pluraleko *-zue* > *-zie* bilakabideaz (§ 3.2.2.2.11), NOR-NORI-NORK sailean gertatutako *-zki-* → *-it-* aldaketaz (§ 3.2.2.2.12), *-e* eta *-te* pluralgileez (§ 3.2.2.2.13), **edun* aditzaren iraganean gertatu *-it-* eta *-z-* pluralgileen txandaketaz (§ 3.2.2.2.14), **ezan* aditzaren adizkietako *-it-* → *-zki-* aldaketaz (§ 3.2.2.2.15), **ezan*-en aginterazkoetan *-a* galtzeaz (§ 3.2.2.2.16), **ezan* + *ke* erabili ordez **edun* + *ke* erabiltzeaz (§ 3.2.2.2.17), alegiazko *l-* aurrizkidun adizkiez (§ 3.2.2.2.18), adizki aferesidunez (§ 3.2.2.2.19) eta hegoaldeko goi-nafarrerazko hitanoko adizkiez (§ 3.2.2.2.20) eta *-itz-* > *-etx-* bilakabideaz (§ 3.2.2.2.21); amaitzeko, zenbait aditzen erregimenaz (§ 3.2.2.2.22) arituko gara.

#### *3.2.2.2.1. Aditz trinkoak*

Azpiatal honetan, aditz trinkoez bi hitz esango ditugu. Mounolek (2011: 336-342) erakusten duenez, trinkoen agerrera urrituz joan da denborak aurrera egin ahala. Goi-nafarrera arkaiko eta zaharra, beste euskalkien antzera, bilakabide horren erakusgarri dela dirudi, testu zaharretan eta berriagoetan agertzen den trinko kopurua baino haziagoa baita.

Dena dela, atal honetan ez dugu agerrera maiztasunik eta kopuru kontaketarik egingo. Aitzitik, XV-XVIII. mendeen bitartean agertzen diren trinkoak ikusiko ditugu

lehenik (§ 3.2.2.2.1.1), eta, ondoren, gehien erabiltzen diren aditz trinkoetan agertzen diren ezaugarri dialektalak aztertuko ditugu. Horrela, *egon* (§ 3.2.2.2.2), *eduki* (§ 3.2.2.2.3), *joan* (§ 3.2.2.2.1.4), *erran* (§ 3.2.2.2.1.5) eta *erauntsi* (§ 3.2.2.2.1.6) aditzek dituzten ezaugarri dialektalak ikusiko ditugu eta, bukatzeko, burutugabea den *heldu den* egituraren agerraldiei begiratuko diegu (§ 3.2.2.2.1.7).

3.2.2.2.1.1. Trinkoen erabileraz

Gorago aipatu bezala, denboraren poderioz euskarazko aditz trinkoen erabilera murriztu egin da perifrasien mesedetan. Nolanahi ere, testu arkaiko eta zaharretan, aditz trinko ugari topa daitezke; ez bakarrik indikatiboan, baita subjuntiboan, ahaleran eta aginteran ere.

xvi. mendekoak dira, besteak beste, indikatiboko *demana* (EtxalekBer) eta *draudaçut* (EzkonEspar) adizkiak, *eman* eta **eradun* aditzenak, hurrenez hurren. Mende berekoa da Uitziko ezkontza fedean agertzen den **edun* aditzaren geroaldiko forma trinkoa: *duquedanas* (EzkonUitz).

xvii. mendean ere usu ageri dira trinkoak. Besteak beste, Arreko koplan *jarraitu* aditzaren indikatiboko *darrayola* ageri da. Bestalde, Beriainek indikatiboaz landako adizki trinko ugari ditu; esaterako, bereak dira aginterazko *zaudete*, *iducaçu*, *indaçu*. Horietaz gain, utergarrak subjuntibo trinkoa ere askotan erabiltzen du:

a) *Gu gauden humildade eta erreverencia gueyagorequi*.
b) *Ala arrazio gueyago da gu gauden erreverencia eta devociorequi.*
c) *Escacen dio […] digun baquea, […], digun fedea.*
d) *Otoytz eguin Iaungoycoari demon vere favorea eta gracia*.
e) *Otoyz eguiten draucot andre dona beti virginari […] eta çuri ayta confessoreorri çaraten Iaungoycoaren aurrean ene otoyzguille*.
f) *Daquigun garadela christioac*.
g) *Nay du iaun onec guc gueuren partetic dugun damu becatu eguines*.
h) *Escacen diot dagon emen lurrean*.

Beriainen obretan ageri diren zenbait trinko nekez aurki daitezke testu berriagoetan. Berea da, besteak beste, *eduki*-ren *diaducote* 'eduki die'; areago, **iron* aditzaren forma trinkoak ere lekukotzen ditu: *ambat diroquenic*, *gueyen diroquenari*, *ala ecin diroquenac*. Subjuntiboan *cindidan adicera* 'aditzera eman zeniezadan' dakar dotrinan.

Beriainen lanez gain, bestelako lekukotasunetan ere bada adizki trinkorik; besteak beste: *jarduki* aditzaren indikatiboko *dearducat* agertzen da Altsasu eta Burunda arteko auziko 1648 inguruko agirian; *eraman* aditzaren *narama* dago Urritzola-Galaingo 1576ko esaldian.

Indikatiboaz landa, arrunta bide da trinkoen erabilera: *nigar begi*, *lo dagigun*, *duçuen* (Amendux), *uçac* (Amaiur, 1659), *veguirayçu* (Intza, 1610), *usdaçu* eta *dagola* (Altsasu/Burunda, c. 1648), *den* eta *datorren* (LeitzAuzi) eta *diraden* (JElGut).

Horien artean, aipagarri bide dira Ezkurrak 1609ko olerki sarituan darabiltzan aginterazko *çarrezquîo* eta *beguirauçu* trinkoak: azken hori ez da goi-nafarrera zaharrean gehiago ageri; edonola ere, Intzako *veguirayçu* haren aldaera izan liteke. Dena den, Intzako aldararen atzean *begira egizu* ere egon daiteke.

Esan dezagun, bidenabar, geroaldia egiteko ohiko forma erabilia perifrastikoa den arren, geroaldi trinkoaren laginik badela goi-nafarrera zaharrean, arkaismo moduan bada ere. Arestian aipatu dugun Uitziko ezkontza fedeko *duquedanas* adibideaz lekora, geroaldi trinkoaren adibide bakanak aurkitu ditugu. Horietarik bat, Henrike Borboikoaren heriotza dela eta, 1554an idatzitako koplan agertzen da: *níc diosçut ciratela iaun gucien iáuna*, hots, 'izango zarela jaun guztien jauna'; beste bat Isastik bildu zuen Sueskunen zortzidunean: *guertu date*. Beriainek *aren partetic eztate faltaric* (Ber*Meza*) dakar. Utergako 1602ko esaldi batean *badiqueat* 'emango diat' adizki trinko interesgarria dugu; *-i(n)-* erroa da, geroaldiko *-ke* atzizkiarekin; cf. *iquedac ta diqueada* (*RS* 233), nahiz eta azken honetan geroaldiko balioa duen subjuntiboa izan.

Bestalde, euskara zaharrean agertzen diren **idi* duten geroaldiko formak oso garaiz galdu ziren goi-nafarreraz, ia aztarnarik utzi gabe. Zehazki esanda, Isastiren errefrauetan bakarrik aurkitu dugu gisa horretako geroaldia:

a) (23) *Daquienac lan daidi ta eztaquienac ler daidi* «El que sabe obra ara, y el que no sabe rebentar puede».
b) (41) *Goiz gorri, euri daidi. Arrats gorri, eguraldi* «Arreboles de mañana aguia, a la tarde arreboles buen tiempo».

3.2.2.2.1.2. *Egon*

*Egon* aditzaren forma trinkoak euskalki orotan agertzen badira ere, nabarmentzekoa dirudi erdiguneko hizkera batzuetan agertzen den *zaute* 'zaudete'. Euskal Klasikoen Corpusean bilaketa eginda ikusten denez, batez ere idazle gipuzkoarrak dira adizki hori erabiltzen dutenak: Larramendi, Kardaberatz, Iztueta, Agirre Asteasukoa, besteak beste.

Goi-nafarreraz Beriainek *zaudete* forma —ustez— berriagoa baradabil ere, zenbait lekukotasunetan *zaute* aldaera agertzen da: *çaute* dago 1566ko Eugiko lekukotasunean eta mende bete beranduago Urdotzen 1687an *zaute*, *çaute*; 1729ko sermoian *zauta* eta *zaute* ageri dira. Pluralean, *zauste*, *zauzte* dauzka Lizarraga Elkanokoak.

Bestalde, hitanoko formetan txandaketa aipagarri bat dugu. Erroibarren *nagoc* (Lintzoain, 1561) agertzen da, baina Basaburu Txikian *-e-* eransten zaio alokutiboko adizkiari: *neagon* (Areso, 1608) eta *çeagoc* (Ezkurra, 1569). Garai berriagoetan, Lizarraga Elkanokoak badu *zeagok*; aldiz, *zegok* du Mendiburuk.

3.2.2.2.1.3. *Eduki*

Aditz trinkoekin lotutako beste ezaugarri dialektal bat *eduki* aditzean dugu. Aditz horren forma jokatuak orokorrak badira ere, bereziak dira goi-nafarreraz agertzen diren pluraleko adizkiak. Lekukotasunen lehen agerraldietatik, kasu honetan XVII. mendetik, *eduki* aditzarekin sistematikoki erabiltzen den pluralgilea *-zki* atzizkia da; honatx adibide batzuk:

a) *Jangoicoac badauzqui castiguac* (Urdotz, 1687).
b) *Jaincoac ofrecituric dauzqui* (Serm1729).
c) *Çeren dauzquien demonioac barrendic* (Serm1743-1).

Beriainek beti dakar forma hori, baina Elizalderen dotrinan ez dugu *eduki* aditzaren pluraleko forma jokaturik aurkitu.

Caminok (2013a: 114) ezaugarri hori Nafarroa garaiko berrikuntzatzat aurkezten du:

> *zki* pluralgileak kutsaturik edo, *eduki* aditzak osagarri plurala duenean *-i* egiten da Nafarroa Garaian pertsona guztietan: *dauzkit*, *dauzki*, *dauzkigu*… Beriainek *baytauzqui* (1626: 10v) dakar eta Goñerriko Urdozko 1687ko prediku antzeko batek *badauzqui*; 1729ko predikuan ere *dauzqui* dago. Nafarroan Aezkoa eta Zaraitzuraino iritsi da pluraleko *-zki* saila, baina Zaraitzun *dauzka*-rekin batean egiten da eta Erronkarin ez zegoen berrikuntzarik: *dazka* era egiten zen. Mendebalean Sakana erdialdean ez dago *-zki*, baina Arakilen bai eta Nafarroako erdigune guztia hartzen du, Larraungo hego-ekialdea barne; Nafarroako ipar-ekialdean ez da Bortzirietara heldu: ez dira bertan *eduki*-ren aldaera trinkoak ia erabiltzen, baina *dauzka* dago Arantzan eta Nora Iriartek eta Maite Lakarrek ez dute lekukotasunetan *dauzka & dauzkat* baizik bildu; gainerateko Bidasoaldean *dauzki* era egiten da: Sunbillan, Legasan, Oitzen, Donamarian edo Urrotzen. Baztanen ere ez da egiten, *dauzke* nagusi da Baztangoizan eta Basaburuan; herri bakar batean, Arraiozen *dauzki* dakar Iñaki Gamindek (1985).

### 3.2.2.2.1.4. *Joan*

Arestikoekin batera, merezi du *joan* aditzaren adizkiez bi hitz egitea. Ikusi dugunez (§ 3), Caminok (2009: 348) goi-nafarrerazko bost ezaugarri esklusiboen artean dakar *joan* aditzaren singularreko adizkietan *noaie*, *(g)oaie* eta *doaie* erabiltzea.

1745 aurreko testuek erakusten dutenez, sistematikoak dira adizki horiek. 1593rako Barasoaingo esaldi batean *goaye* 'hoa' dugu. Ondotik, beti agertzen da forma hau: *duaye* & *doaye* (ArreKop), *cioayenean*, *doayenean*, *noaye* (Ber*Meza*), *doaye*, *doaiena* (El*Dot*), *doaie* (Serm1743-1). Hala ere, Aldatzek 1609ko olerkian *doaque* erabiltzen du potentzialean.

Berrikuntza hori singularreko adizkietan bakarrik gertatzen da, Beriainek *doazenes* modukoak baititu. Bestalde, pluraleko forma horrezaz landa, Obanosko 1744ko bertsoetan *doaci* ageri da, 1656ko Aroztegiko (Atetz) lekukotasunean *çoaçe* agertzen da, eta *çoaça* dugu Iruñean 1632an. Aldiz, Gorritiko 1554ko lekukotasunean *çoaz* dugu, eta *çoas* Artaxoan 1607an.

### 3.2.2.2.1.5. *Erran*

Euskarazko testu zaharretan oso gutxitan agertzen dira lekukoturik *erran* aditzaren forma trinkoak. Areago, orain arte ezagutzen zen adibide bakarra Lazarragaren *çarrezt* da, NOR-NORI sailekoa, «zu, niri». Orain, idazle arabarraren lekukotasunari Larrasoañako 1579ko esaldi batean agertzen den *çarreço* gehitu behar zaio; hau ere NOR-NORI sailekoa, «zu, hari».

### 3.2.2.2.1.6. *erauntsi*

Olagueko 1615eko lekukotasun batean *drainsatela* dugu. Ez da ziurra, baina gaztelaniazko 'hablan' itzulpena ikusirik, badirudi *erauntsi* izan daitekeela oinarria. Dena den, hala balitz, *au* > *ai* bilakabidea proposatu beharko genuke.

3.2.2.2.1.7. *Etorri* vs *heldu da*

Aditzki trinkoekin amaitzeko, *heldu da* gisako egiturak ikusiko ditugu, horrek erakusten baitu *etorri* aditzaren orainaldiko forma trinkoak galdu direla, egitura berriaren mesedetan.

Ekintza burutugabea adierazten duen perifrasi horren Nafarroako lehen adibide ziurrak XVIII. mendean agertzen dira. 1729ko sermoian *eldu baita eraicioaren bilcea* agertzen da, baina horretan zail da ekintza burutua ala burutugabea den jakitea. Dena den, Santsoaingo 1594ko esaldian agertzen den *eldu çaren* puntukaria izan daiteke, ez burutua.

Testuinguruagatik zalantza gutxi dute Elizalderen dotrinako ondoko adibideek:

a) *Nor eldu den sacramentuan, norengana eldu den, nola eta cer finequi*
b) *Comecaceracoan pensatu bear du Jangoycoa eldu dela orrequi egotera*.

Bi adibide horietan ekintza burutugabea da. Hala ere, Elizaldek *etorri* aditzaren adizki jokatua ere erabiltzen du inoiz: *adina datorreneco*. 1744 inguruko Obanosko bertsoetan ez da zalantzarik aspektu burutugabea duela ondoko adibideak: *eldu da ya guero oliadura*.

Lehenagoko testuetan, Larrasoañako 1579ko esaldian *datorrela* agertzen da; eta adizki berbera dago 1729ko sermoian. Beriainek ere *etorri* aditzaren forma jokatuak darabiltza: *eta oroycen garadela nola datorren aldarera*; *Considera zaçu erregue bat datorrenean ciudade batera cembat gende atracen den aren icustera* (Ber*Meza*).

*3.2.2.2.2. Izan*

*Izan* aditzaren orainaldiko adizkiei dagokienez, hizkera batzuek pluraleko lehen eta bigarren pertsonetarako *gara* eta *zara* mantendu dute; aldiz, beste batzuek *gera* eta *zera* edo *gira* eta *zira* forma berriagoak dituzte.

Nafarroa Garaiko testu zaharrei begiratzen badiegu, *gara & zara* aldaera zaharrak dira nagusi; sistematikoki *-a-*dun aldaera agertzen da: *gara* (Amendux), *zarade* (OrreBer), *garade*, *zarade* (Ber*Meza*, Ber*Dot*), *ezpagara* (MElGut), *gara*, *zara* (El*Dot*). Mikelestorena da lehenetarik *guera* erabiltzen Nafarroan, baina orokorrean *gara* erabiltzen du lesakarrak.

Arestiko adibideetan dakusagunez, autore batzuek *garade*, *zarade* eta *dirade* adizki pleonastikoak darabiltzate pluralean. Beriainek beti erabiltzen ditu halakoak; salbuespen bakarra dotrinan aurkitu dugu: *ezcara*. Aldiz, Elizaldek dotrinan *zara*, *gara* dauzka beti. *Dirade* XV. menderako agertzen da, kondestablearen kantuan, eta XVI. mendearen amaieran Aresoko otoitzetan ere *dirade* dugu.

Testu zaharrak kontuan hartu eta aldaera pleonastikoen hedadura geografikoari begiratzen badiogu, ikusiko dugu *dirade* aldaerak *garade* eta *zarade*-k baino hedadura zabalagoa duela. Dirudienez, *dirade* forma Nafarroa ia osoan erabiltzen da, *dira* aldarearekin txandaka. *Garade* eta *zarade* formek, ordea, hedadura murritzagoa dute. Nafarroako erdigunean eta bertatik ekialdera bakarrik agertzen dira. Lekukotasun zaharretan Pater noster txikian, Beriainen obretan eta Orreagako bertsoan ditugu *garade* eta *zarade*; eta, beranduago, Lizarraga Elkanokoak biak darabiltza. Euskal Klasikoen Corpusaren arabera, *garade* Nafarroan bakarrik agertzen da, baina *zarade* Lapurdin ere badago Etxeberri Ziburukoaren eta Gazteluzarren lanetan. Gainera, Erronkariba-

rren Bonapartek bildu testuetan *zra*, *gra*, *zrade* eta *grade* daude, *dra* eta *drade*-rekin batera. Aldiz, mendebalerago Markotegik *dirade* eta *gara* dakartza, eta egoera berbera du xviii. mendeko dotrina argitaragabe batek (Reguero prestatzen-1).

Horrezaz landa, aipagarri da hirugarren pertsona pluraleko *dire* aldaera. Agidanez, ez da *i*-ren ondoko bokal ixtearekin lotu behar. Bilakabide fonologiko hori 1745 ondoko lekukotasunetan agertzen da, ez lehenago. Aldiz, *dire* zaharragoa da; beraz, beharbada, *diren* eta *direla* modukoetatik berranalizatuta zen edo *dirade* > *dire* gertatu da.

Lekukotasunetara joz gero, 1735ean Elizaldek idatzitako dotrinan sistematikoki aurkituko dugu *dire*, baita 1729ko sermoian eta 1743ko Obanosko bertsoan ere. Aurreko mendean, bada ezaugarri horren laginik: *dire*, *eztire* (Baraibar, 1649), *dire* (Urdotz, 1687), *dire* (MElGut). Badirudi Iruñetik mendebaldera egiten dela: Elizaldek bere dotrinan badu, eta Estellerriko xviii. mendeko sermoietan ere hala da (Lekuona 1973). Hemendik iparraldera Bortzirietan *dire* du Miguel Elizalderi izebak idatzitako gutunak, eta *dire* dugu Bonaparteren ondareko Berako dotrinan eta Malerrekako Beintza-Labaiengoan; eta Nafarroako muga pasata, Lapurdiko kostalderaino heltzen da forma hori. Halaxe dute, besteak beste, Etxeberri Ziburukoak, Voltoirek, Gazteluzarrek, Aranbillagak, Etxeberri Sarakoak, eta hala erabiltzen da gaur egun ere.

*Izan* aditzarekin amaitzeko, nor-nori saileko laguntzailetzat erabiltzen denean, *nayçaye* (Ziga, 1576), *nayçacan* (UitziEzkon) eta *nayçayo* (Ber*Meza*, Ber*Dot*) *-ai-* diptongodunak agertzen dira; xviii. mendean Irazusta eta Kardaberaz gipuzkoarrek ere diptongodun aldaera dute.

### *3.2.2.2.3. *Edun*

Ezagun denez, **edun*-en orainaldiko adizkiek duten erroaren arabera, euskararen eremua hirutan bana daiteke: *dot* mendebaldean, *det* erdialdean eta *dut* ekialde zabalean.

Bonapartek, bere galdetegia egitean, aski izan zuen hizkera batek *dut* gisakoak dituen begiratzea mintzo hori euskara nafarrean kokatu eta gipuzkeratik bereizteko. Hain zuzen ere, goi-nafarreraz idatzitako lehen testuetatik hasita, *-u-* errodun adizkiak agertzen dira: *dut*, *duc* (Uitzi, 1506), *dugu* (MElGut), *dut*, *duzu* (JElizal); 1609ko olerki sarituek, Beriainek eta F. Elizaldek ere beti *-u*-dun aldaera dute. Behin bada ere, Berako olagizonaren gutunetan *dezu* aldaera agertzen da, *izanen badezu*, baina nagusi *-u-* daraman aldaera da: *erran dudana, bidalcen dut, boronte baduzu*. Berako kasua Gipuzkoaren hurbiltasunak eragin lezake; alabaina, Gipuzkoatik gertu dagoen Goizuetako 1753ko sermoiak (Reguero 2105) ez du *-e-* errodun aldaerarik; *-u*-dunak, aldiz, bai.

Bestalde, Satrustegik argitaragabe utzi zituen Muruzabalgo sermoien artean, hark «Nafarroako mendebaldekoak» izendatu zuen sermoi sorta bat dago. Guztiak dira xviii. mendearen erdialdekoak, eta horietan *-e-* eta *-u-* duten adizkiak agertzen dira. Nolanahi ere, interesgarri bezain beharrezko da oraindik argitaratu eta editatu ez diren sermoi horiek bere osotasunean aztertzea. Mikelestorenak xviii. mendearen erdialdean idatzian *dezu* ugari ditu, baina *dugu* da nagusi; 1777an Markotegi ollarandarrak ere *dezu* eta *duzu* erabiltzen ditu (Knörr 1992: 226). Sakanan txandaketa handia dago **edun*-en adizkietan: lehen eta bigarren pertsonan *de-* dago Etxarrin; *dot*, *dok/n* baina *dezu*, *dezie* Ergoienean eta *du-* Arbizun, Lakuntzan, Arruazun eta Uharte Arakilen (Erdozia 2001).

Bestelakoa da egoera singularreko hirugarren pertsonarekin. Izan ere, *-u-* da beti goi-nafarreraren eremu osoan, salbu eta Arabarekin muga egiten duten eskualdeetan: Ameskoabarrengo Artatzako euskarazko testuan *dau* modukoak daude (Salaberri 2004), eta Urdiainen *dau* jaso du Zuazok (2010a: 134). Sakanan Erdoziak (2001: 311) *dau* jaso du Etxarrin, *do* Ergoienean eta *du* Arbizun, Lakuntzan, Arruazun eta Uharte Arakilen.

### *3.2.2.2.4.* -i(n)- *erroa eta* *eradun *aditz laguntzaileen banaketa

Euskararen dialekto historikoetan NOR-NORI-NORK sailean hiru aditz laguntzaile ditugu. Gainera, laguntzaileok banaketa geografikoa ezaguna dute, oro har: **edutsi* agertzen da mendebaldeko testuetan, **eradun* dago ekialdean eta erdigunean. Azkenik, ustez *-i(n)-* erroa euskalki guztiek dute edo inoiz izan dute (ik. Mounole 2015: 480). Dena den, aditz laguntzaile hedadura eta mugak zehazteko daude.

Hau esanda, dakusagun goi-nafarreraz laguntzaileok izan duten bilakabidea. Hasieratik bertatik, **eradun* eta *-i(n)-* laguntzaileak agertzen dira Nafarroa osoan:

> Les textes haut-navarrais du 16ème siècle, présentent aussi bien des formes de **eradun* que des formes de **i* […]. Néanmoins, ne connaissant pas la provenance exacte de certains des textes étudies (plus spécialement du *Gure Aita*), il est assez difficile d'offrir de conclusion embrassant les différentes variétés du haut-navarrais. (Mounole 2011: 137-138)

Goi-nafarreraz XVI. mendeaz geroztik lekukotzen da **eradun*, baina ez da, oro har, aditz laguntzaile hori bakarrik agertzen, *-i(n)-* erroa ere agertzen baita. Arestiko aipuan Mounolek goi-nafarrerari dagozkion ondorio orokorrak ateratzea zaila dela dioen arren, interesgarria dirudi, mendez mende, lekukotasunez lekukotasun eta eskualdez eskualde ikustea testuetan zer gertatzen den.

Aresoko otoitz zaharretatik hasiz gero, bertan indikatiboko NOR-NORI-NORK saileko hiru perifrasi ditugu, eta beti *-i(n)-* erroa erabiltzen da: *dizquigueney*, *diezcun* eta *diztegun* (ik. orain honetaz Ariztimuño 2016). Iparralderago joaz, Berako olagizonaren gutunetan hamar aukeretatik bitan erabiltzen da **eradun* eta zortzitan *-i(n)-*. Hala ere, ez dirudi banaketa osagarrian direnik, *derauçut* 'nik zuri' agertzen da, baina *dizut*, *dizudanean* 'nik zuri' ere bai. Gutun horietako iraganeko kasu bakarra **eradun* da: *nerauçun*. Ibar bereko Joseph Elizalderen eta Miguel Elizalderen eta honen izebaren arteko gutunetan beti erabiltzen da *-i(n)-*: *dit*, *diot*, *nion*, *diot* (MElGut); *zenidan*, *diot*, *dizut*, *diozuela* (JElGut). Aitzitik, Lesakako esaldi batean *derauec* (Lesaka, 1609) agertzen da. Basaburu Txikian Bortzirietakoaren antzeko egoera bide da, halakorik baieztatzeko lekukotasun gutxiago dugun arren: *didaçu*, *deraudaçu* eta *derauçue* agertzen dira 1569ko Ezkurrako lekukotasun batean.

XVI. mendean ohikoak ziren ezkontza fedeetan **eradun* agertzen da Arizkunen Beorburun, Olatzagutian, Bakedaon, Agoitzen, Zufian eta Galarko Espartzan;[1274] aldiz, Utergan *-i(n)-* erroa agertzen da. Dena dela, dialektologiarako, interesgarriagoak dirateke auzi-agirietan agertzen diren lekukotasunak: *didazue* (Goizueta, 1633), *de-*

[1274] Espartzako lekukotasunean **eradun*-en laguntzailea eta trinkoa lekukotzen dira, baina *drauçut* da lehena eta *draudaçut* bigarrena, biak dira 'nik-zuri-hura'.

*raut* eta *didate* (Gorriti, 1554), *estrauco* (Larrasoaña, 1606), *eraman dizquidate* (Baraibar, 1649), *ecioat* (Egues, 1596), *dizquedan* (Iruñea, 1562), *diote* (Iruñea, 1596), *draut* eta *dit* (Etxauri, 1598), *dausquidala* (< **derauzkidala*; Muruzabal, 1605), *diat* (Irunberri, 1629), *drayçudala* (< **derauzudala*; Artaxoa, 1607). xvii. mende hasieran Orreagako Amari eskainitako bertsoan *eman dio* agertzen da. Mende berean Iruñean sarituak izan ziren olerkietan *draue* eta *digu* (EzkOl), *drauco*, *dion*, *digu* (AldOl) eta *eman çigu*, *ematen dió* (ElOl) ditugu; bietarik alegia. Otsagabiko 1598ko lekukotasunean bi kasutan agertzen da *-i(n)-* erroa: *emanen nioque* eta *eracuchico diot*. Ezkarozen ere, 1590eko esaldian, bi aldiz agertzen da *-i(n)-* erroa: *emanen diat* eta *nay diat*; dena den, azken hori ez da NOR-NORI-NORK sailekoa, alokutiboa baizik. Ikus daitekeenez, kontuan hartu ditugun bi aditz laguntzaileak ez daude banaketa osagarrian.

Era berean, Beriainek *-i(n)-* erroa eta **eradun* erabiltzen ditu, eta bere obretan ere ez dirudi bien arteko banaketa osagarririk dagoenik. Dena dela, bada ohar aipagarririk: batetik, *-i(n)-* erroaren agerraldi kopurua **eradun* laguntzailearena baino hagitzez altuagoa da: *Meza*n 205 alditan dakar *-i(n)-* erroa eta 43 alditan **eradun*. Gainera, azken hori orainaldian bakarrik erabiltzen du Beriainek bere obretan. Bestalde, **eradun* laguntzailea kasu gehienetan, *draugu* batzuk izan ezik, beti testuan txertatu diren aipu edo besteen esanetan agertzen da (ik. E § 2).

Hurrengo mendean, 1729ko sermoian eta 1743ko bietan beti *-i(n)-* erroa erabiltzen da, eta Elizaldek dotrinan ez du inoiz **eradun* erabiltzen. Aldiz, 1753ko Goizuetako sermoian **eradun* da nagusi: *derazquiola*, *cerazquizun*, *cerazquiola*, *-i(n)-* errodun bakanen artean (cf. Reguero 2015b). 1750eko eliza-aginduko Elbete eta Elizondoko bertsioetan *derabeztegularic* agertzen da, baita erro bereko dirudien *dabegu* (< **derauegu*) eta *causatuco daucutela* ere (Reguero 2019).

Ikusten denez, **eradun* goi-nafarrera arkaiko eta zaharraren ia eremu osoan lekukotzen eta erabiltzen da; nahiz eta xviii. mendetik aurrera ez den agertzen Nafarroako hegoaldeko testuetan: Beriainek bi aditz laguntzaileak erabiltzen ditu, baina hurrengo mendeko Elizaldek, Markotegik, Juan Iberokoak, Utergako dotrinak eta Lizarraga Elkanokoak ez dute *-i(n)-* erroa baizik erabiltzen.

Oraindik ere, gaurko hizkera nafar batzuek **eradun* mantentzen dute: *dazkizut* 'derauzkizut', *nazkizun* 'nerauzkizun', *zazkiezun* 'zerauzkiezun' gisakoak bildu ditu Zuazok (2013: 92) Mailopen, Aralarren magalean. Larraungo ipar-mendebalean eta Araitz-Betelun *-a-* erroa dagoela dio Apalauzak (2010: 398), eta, ezbairik gabe, **eradun*etik datoz *dakot* gisakoak. Baztanen datiboa lehenengo edo bigarren pertsona denean **eradun* erabiltzen da; hirugarrenarekin, batez ere, *-i(n)-* erroa (Zelaieta 2008: 196). Burundan ere **eradun* agertzen da (Erdozia 2001). Ibarrak (2000: 172-176) emandako datuetan, Eguesibarko eta Erroibarko eremu batzuetan, batez ere iparraldean, *-ako*-eta *-akote-* erroa duten adizkiak agertzen dira, zalantzarik gabe **eradun*; aldiz, Ultzaman, Odietan, Anuen, Esteribarren, Basaburua Nagusian eta Imotzen *-i(n)-* erroa ageri da (Ibarra 1995: 440-453).

Berriki arte (ik., besteak beste, Mounole 2015), *-i(n)-* erroa hartu izan da forma zahar eta inoiz orokorra izandakotzat. Lakarrak (2011), aldiz, *-i(n)-* erroa eta **eradun* hartzen ditu forma orokor eta zahartzat, eta **edutsi* mendebaldeko berrikuntza dela iradokitzen du.

Edonola ere, *-i(n)-* erroa erdiguneko berrikuntzatzat hartzeko arrazoiak ditugula uste dugu (cf. Reguero 2018). Batetik, ertzetako dialektoetako (bizkaiera eta zube-

rera) testu zaharrenetan ez da *-i(n)-* erroa laguntzaile moduan ageri —bai, ordea, trinko moduan—; aldiz, hasieratik ageri dira **edutsi* Bizkaian eta **eradun* Zuberoan. Bizkaian dagoen adibide bakarra *Refranes y Sentencias* errefrau bilduman dago eta, beraz, Bizkaitik kanpo bildua izan daiteke.[1275] Arabako lekukotasunetan erdialdeko eta ekialdeko aldaeretan idatzitako testuetan bakarrik ageri da (Lazarragak, Gamizek, Albenizek eta Iturbe; aldiz Betolatzak eta *Dotrinazko Sermoitegia*-k ez dute laginik), baina **edutsi*-rekin txandaka, eta antzeko egoera dugu Gipuzkoako (hego-)mendebaldean —honi buruzko xehetasun gehiagorako ik. Reguero 2018—. Bestetik, batez ere erdialdean eta ekialdean ditugun berrikuntzak *-i(n)-* erroa laguntzailearekin gertatu dira, ez **eradun*ekin:

1. Analogiaz hedatu zen *-te* pluralgilea *-i(n)-* erroak hartu du, Nafarroako erdialdean bederen: *dizquigue* → *dizquigute*.
2. *-zki-* → *-it-* aldaketa *-i(n)-* erroko laguntzaileetan gertatu da: *derauzkiot* baina *ditiot*.
3. Zuketan testu zaharretan erabiltzen den aditz laguntzailea *-i(n)-* erroa da; Zuberoako lekukotasunetan kasu, *-i(n)- erroa* agertzen da, baina zuketan bakarrik.[1276]
4. Gainera, Lapurdi eta Behe Nafarroan **eradun* eta *-i(n)-* erroa agertzen badira ere, azkena datiboa hirugarren pertsona denean bakarrik ageri da. Ez dago arazorik pentsatzeko hirugarren pertsona dela berritu dena; izan ere, hizkuntza askotan hirugarren pertsonak aldaketa jasaten ditu; aitzitik, lehen eta bigarren pertsonan ez da aldaketarik egoten (Mańczak 1957: 301-312).
5. Azkenik, Hegoaldeko erdiguneko hizkeretan, hau da, historikoki *-i(n)-* erroa eta **eradun* izan dituzten hizkeretan, *-i(n)-* da gailendu dena; eta usu forma berria da zaharraren gainetik nagusitzen dena.

Goragoko atal batean aipatu dugunez (§ 1.2.1), ezaugarri batzuk eremu batean sortu eta inguruko eskualdeetara hedatzen dira. Dena den, progresiboki ahuldu egiten dira fokutik aldendu ahala. Hockek iradokitakoari jarraituz (1991: 440; cf. Petit 2007: 36; ik. arestian aipatu atala lan honetan), *-i(n)-* erroa laguntzaile gisa gramatikalizatzearen foku-gunea Nafarroa hegoaldean edo Gipuzkoan jar dezakegu; aldiz, Nafarroako iparraldea eta ekialdea, Lapurdi, Behe Nafarroa eta Arabako erdialde-ekialdea trantsizio guneak lirateke. Azkenik, Bizkaia eta Zuberoa hondar-guneak lirateke, berrikuntza izan ez zuten eskualdeak, alegia.

**Eradun* laguntzaileko adizkien formari dagokionez, Caminok (2013a: 106) dakarrenez, Lapurdin *derau-* egiturak diptongoarekin iraun zuen, eta Nafarroa Beherean *derau-* > *darau-* eta *derau-* > *daro-* gertatu ziren; bestalde, gehitzen du Beorburun 1536an eta Olatzagutian 1548an *derauçut* agertzen direla, baina «galduz eta soilduz joan ziren gero aldaerok». Nafarroan XVII. mendetik aurrera *derau* eta *drau* bi aldaerak agertzen dira; edonola ere, badirudi banaketa geografikorik badutela: sinkopadu-

---

[1275] *Arloteari emayoc arrauça, escatuco dyc zoça* (*RS* 25) da 1596an argitaratutako errefraua, eta adizki kontuak ez ezik, aintzat hartzekoa bide da *arrauça*-k ez daukala mendebaldean ohikoa den *a* + *a* > *ea*.

[1276] Tartasek eta Oihenartek erabiltzen dute *-i(n)-* erroa alokutibotik landa, baina ezagun da bi idazleok behe-nafarrerarekin eta lapurterarekin izandako harremana. Aurkitu dugun Oihenarten adibide bakarra errefrauetakoa da; eta Tartas Arüen, Amikuze ondoan, egon zen apaiz.

nak nagusiki Nafarroako erdi-hegoaldean agertzen dira, Beriainen idatzietan, 1609ko olerkietan eta Artaxoako 1607ko esaldian adibidez; aldiz, Bortzirietako, Baztango eta Goizuetako lekukotasunetan Lapurdi aldeko aldaera berbera topatzen dugu, sinkopatu gabea, alegia. Aldaera horiezaz gain, inoiz *-r-* gabeko aldaera berria agertzen da. Etxauriko 1598ko lekukotasunean *estaut* dago, baina *cerauda* eta *draut* ere badira. Muruzabalgo 1605eko esaldi batean, *dausquidala* (< **derauzquidala*) dago. Nafarroa mendebaldeko XVIII. mendearen bigarren erdialdeko dotrina batean pluralean **eradun* erabiltzen da eta *darazqui-* da aldaera (Reguero prestatzen-1).

### *3.2.2.2.5. Indikatibotik landako* NOR-NORI-NORK *saileko laguntzaileez*

Aurreko atalean ikusi dugunez (§ 3.2.2.2.4), goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean NOR-NORI-NORK sailean aldakortasuna dago indikatiboan, baina hortik landa ere ez da homogeneotasunik ageri. Hain zuzen ere, iparraldeko eta hegoaldeko goi-nafarrerak bereiz daitezke sail horretan erabiltzen den laguntzailearen arabera. Zehatz esanda: hegoaldekoek **erazan* erabiltzen dute eta iparraldekoek **ezan*; gainera, iparraldeko hizkera batzuek, ez denek, *dative flag* edo datibo aurrekoa dute (Trask 1997: 228).

Hegoaldeko goi-nafarreraren ezaugarri esklusibotzat hartu ohi da indikatibotik landako NOR-NORI-NORK saileko **erazan* laguntzailea (Camino 2003b: 75). Lehen lekukotasunetatik agertzen da, eta adibide zaharrena Juan Irañetak 1549an idatzitako gutuneko esaldian dago: *parca derozola*. XVII. mendean ere lekukotzen da aditz laguntzaile hori: *eros draçogungatic* (ElOl), *eman draçaguçu* eta *[…]trazogula* (NafKat). Beriainek ere sistematikoki erabiltzen du **erazan* aditza: *eman drazquiogun*, *igor draçogun*, *barca drazquigun*, *eman draçoquete*, *eman draçoquegutela*. Hegoaldeko aldaeran mintzo den Izarbeibarko Adiosen lekukotzen zaigun 1650eko esaldi batean *çadaçu* agertzen da; **derazadazu* batetik erator daiteke, jarraian ikusiko dugun bezala.

Caminok (2003b: 75) dioenez, XVIII. mendetik aurrera ez da lekukotzen **erazan*-en adizkirik, ez Lizarraga Elkanokoaren lanetan, ezta ekialderagoko idazki berriagoetan ere. Halaber, aipatzen du Bonapartek Elkanon, Garesen, Oltzan eta Goñin *zarazu* eta *zaguzu* bildu zituela, ez ***drazadazu* edo ***drazaguzu*. Aezkoan ere *dazaguzu* dago, ez ***drazaguzu*.

Nolanahi ere den, Bonapartek emandako *zarazu* eta *zaguzu* **erazan* aditzaren formak izan daitezke: **derazadazu* > *dazadazu* > *zadazu* > *zarazu*. Bigarrenari izarñoa kendu diogu, Elizaldek bere 1735eko dotrinan *eman dazaguzu*, *barca dazquiguzu*, *eracutsi dazaguzu* dituelako. Gure ustez, adizki horien atzean dagoen laguntzailea **erazan* da; eta, beraz, arestian emandako Adiosko 1650eko *çadaçu* eta Aezkoako *dazaguzu* ere **erazan* izan daitezke.

Elizalderen aditz laguntzaileen formak aztertzen baditugu, goian eman ditugun NOR-NORI-NORK adizki horiek ez dirudite **ezan*enak direnik. Hain zuzen ere, NOR-NORK saileko formetan *de-* du Elizalderen testuak: *erran dezala*, *sinesta dezagula*, *eguin dezatela*; aginterazko formetan *e-* galtzen dute adizkiek, *zazu* adibidean ikusten denez. Aldiz, NOR-NORI-NORK saileko aginteran *da-* dugu: *dazaguzu*, *dazquiguzu*. Beraz, ez dirudi **ezan* denik; aitzitik, Beriainek bezala **erazan* erabiltzen du. Hala ere, NOR-NORI-NORK saileko subjuntibozko adibide bakarra dugu, eta hor **ezan* erabiltzen du: *dezogungatic* (ik. E § 3.2).

Elizalderen adizkien azterketa horretatik ateratako ondorioak beste lekukotasun berriagoetara heda daitezke eta, beraz, proposa daiteke Aezkoan egun dagoen *dazaguzu* ere **erazan* dela; baita, besteak beste, Bonapartek (*OOV*: III) argitaratutako Aezkoako katiximan agertzen den *Jangoicoac eman dazquigula* (< **derazquigula*) horretan duguna ere. Caminok (2003b: 75) Aezkoan **erazan* balego ***drazaguzu* behar lukeela iradokitzen du —Beriainen obretan eta XVII. mendean agertzen diren adizkietan oinarrituz beharbada—, baina iparraldeko goi-nafarrerako hizkera askotan *dakot* 'diot' daukagu **eradun* aditzarekin, ez ***drakot*. Beraz, hizkera horietan *derau-* > *da-* egin da **eradun*ekin; eta, hortaz, *deraza-* > *daza-* gertatzea guztiz zilegi da.

Hori hala dela onartuz gero, **erazan* aditz laguntzailea hegoaldeko goi-nafarreratik haratago, Zaraitzun eta Erronkaribarren ere agertzen dela uste dugu. Goraxeago aipatu dugun Aezkoako katiximaren Zaraitzuko eta Erronkaribarko ordaintzat hauek dakartza Bonapartek: Zar *Jangoicoac eman dazaizcula* eta E *Jangueicuac emon dazquigula* (*OOV* III: 290-291). Besteak beste, katixima bereko Zaraitzuko Aitagureko *parca dazaizcuzu* eta Erronkaribarko *parca dazquiguzu* adizkietan ere **erazan* legoke. Aezkeraz ikusi bezala, horietan ere ez dugu ***dr-* espero. Nahiz eta Erronkaribarren zein Zaraitzun *dra(de)* eta *zra* gisako adibide andana dauden, **eradun* adizkietan ez dago *muta cum liquida* multzorik.

Badarik, XVIII. mendearen erdialdetik aitzina, **erazan* aditzak eremua galdu du —edo hala dirudi— hegoaldeko goi-nafarreraz.

1750 ondoko testuak arakatzen baditugu, zailagoa da **erazan* aurkitzea. Lizarragaren *Ongui iltzen laguntzeco itzgaiac* obraren edizioan Ondarrak (1984) jasotako aditz zerrendan, indikatibotik landa, agintera ez diren adizkietan **ezan* agertzen da: *dezogun*, *dezoque*, *balezaguque*. Aldiz, aginterazkoak aferesia izan duten **erazan*-en adizkiak izan daitezke: *zaguzu*, *zozu* eta, aferesi gabe, *dezquidala*, *dazquiguzu* (ik. E § 4). Hau da, Lizarragaren obretan horretan Elizaldek duen banaketa bera dukegu: aginteran **erazan* erabiltzen da, subjuntiboan eta ahaleran **ezan*. Egun, Ultzaman eta inguruan *dezoket*, *dezokegu*, *zezoken* modukoak jaso ditu Ibarrak (1995: 454-455).

Bestelakoa da Iparraldeko goi-nafarrerako hizkeretan daukagun egoera. Mintzo horietan **ezan* erroa erabiltzen dute *-i- dative flag* edo datiboaurrekoarekin, Lapurdin eta Nafarroa Beherean bezalaxe: *eztiazola eragozi* 'ez diezaiola eragotzi' (LeitzAuzi), *eguin deaçadazun*, *egor diezadazun*, *barca diazadazu* (BeraGut), *eman diezazuela*, *yiuz diezazula* (JElGut). Kasu horretan, aipagarri da *barca diazadazu* aginterazko perifrasia. Caminok (2013a: 129-130) Nafarroako ipar-ekialdeko eta Lapurdiko euskararen berrikuntza esklusibotzat dakar; besteak beste, Materrak hauek ditu: *Declara diaçadaçu hobequiago* eta *Beha diaçoçu, aita cerucoa, pietatezco obra handi huni*. Dena den, Leizarragak eta Axularrek ez dute halakorik. Subjuntiboko perifrasien analogiaz hedatua bide den ezaugarri horrek Bortziriak Lapurdirekin lotzen du beste behin. Dena den, ohart gaitezen, Nafarroako hegoaldeko mintzoetan ere badagoela *d-* aginterazko **erazan*-en adizkietan: *drazaguzu* (Ber*Meza*), *dazaguzu* (El*Dot*).

Bestalde, Miguel Elizalde eta bere izebaren arteko XVII. mende bukaerako gutunetan **ezan* dago, baina datiboaurrekorik gabe, beharbada aferesiagatik: *escribi zadazu* eta *bidal ezaguzu*. XVIII. mendetik aurrera aferesidun adizkiak agertzen direnez, zailagoa da jakiten adizkiaren jatorrizko forma zein den; besteak beste, 1743ko bigarren sermoian aldaera aferesidunak ditugu, eta ezin da jakin jatorrian *-i-* datiboaurrekoa ote zegoen: *erran zadazute*, *erran zadazu*.

Gipuzkoarekiko mugan txandaketa dugu: Aresoko otoitzetan *eguin* agertzen da NOR-NORI-NORK saileko laguntzaile gisa: *erregutu eguiozu* eta *eracusi eguiguçu*. Hala ere, testu berean *jazquiguçu* dugu; alegia, **ezan* ere erabiltzen da *dative flag* delakoarekin. Horretaz landara, Iruñetik iparraldeko inguru batzuetan **ezan* erabiltzen da: 1743ko lehenengo sermoian *deitu eztezon* 'dei ez diezaion' dago, eta *resisti dezoque* 'resisti diezaioke', *conjura dezoten* 'konjura diezaioten' ditugu urte bereko 2. sermoian.

Orain arteko adibideetan ikusi dugunez, oro har, datiboaren marka erroaren ondotik jarri ohi da. Dena den, bada txandaketarik testuetan, batik bat datiboa hirugarren pertsona denean. Hain zuzen ere, Berako olagizonaren gutunetan *eman deozaçun* 'diezaiozun' dugu, eta bertan erroaren aurretik dago datiboaren marka. Dena den, datiboa bigarren pertsona denean, *dative flag* eransteaz gain, datiboa erroaren ondotik dago: *egor diezadazun*. Gainerako testuetan *-o-* datiboko hirugarren pertsonaren marka erroaren ezkerrean dago. Besteak beste, 1743ko lehenengo sermoian *deitu eztezon* dago, datibo marka erroaren ondoren duela, eta *resisti dezoque*, *conjura dezoten* ditugu urte bereko 2. sermoian. Gauza bera dugu, dirudienez, Elizalderen *esca dezogungatic* eta 1729ko sermoiko *dispensa dezoque* adibideetan. **Erazan* aditzari dagokionez, Irañetaren gutunean agertzen den *parca derozola* horretan erredundantzia dugula dirudi eta datiboko marka bitan dugu; batetik, morfema kausatiboaren eta erroaren artean eta, bestetik, erroaren ondoren. Dena den, lehen *-o-* bigarrenaren asimilazioz ere izan liteke, hutsa ez bada: **derazaola* > *derazola* > *derozola*. Gainerako testuetan *-o-* erro ondotik ageri da: *draçogun*, *draçoten* (Ber*Meza*).

Laburbilduz, dirudienez, garai zaharrenetarako hiru eremu bereiz daitezke goi nafarreran NOR-NORI-NORK saileko aditz laguntzaileari erreparatuta. Iparraldean **ezan* erabiltzen da, *dative flag* delakoarekin, hegoaldean **erazan* dugu; aldiz, bien arteko erdigunean **ezan* agertzen da. Azkenik, XVIII. mendetik aurrera, hegoaldean **erazan* galdu eta arrasto bakanak geratu ziren, aginteraz bereziki, eta erdiguneko **ezan*-en aldaerak nagusitu zirela dirudi.




**12. mapa**

Indikatiboaz landako NOR-NORI-NORK saileko aditz laguntzaileak Nafarroan

### *3.2.2.2.6.* *Iron *aditza*

Ekialde zabaleko mintzoek **ezan* aditz laguntzailearekin batera **iron* ere erabiltzen dute potentzialeko NOR-NORK saileko perifrasietan (ik. Padilla 2013); eta, lekukotasun zaharrek erakusten dutenez, goi-nafarrera ez da eremu hartatik landa geratzen. Euskalki horretan **ezan* nagusi izan arren, **iron* agertzen da, bakan bada ere.

**Iron* aditz laguntzailearen adibide oso gutxi aurkitu ditugu, baina Nafarroako zenbait lekutakoak direnez, inoiz eremu handiagoa izan zuela iradoki eta goi-nafarreraren eremu osoa hartzen zuela pentsa liteke.

Ezagutzen dugun lekukotasun nafar zaharrena Lesakako 1549ko esaldi batean agertzen da: *suc ezindiro erran* (Lesaka, 1549). Jatorri zehatz ezagunik ez duen lekukotasun batean *Luys Delcarte noble persona, edan diroque ardo ona* agertzen da 1664an. 1609ko Aldatzen olerki sarituan *eman diroque* eta *jan diro* ditugu; azkenik, *eguiñ guindiro*, *adi guindirola* agertzen dira 1729ko sermoian.

Bestalde, Beriainen obretan aditz laguntzaile gisa **iron* agertzen ez bada ere, trinko bezala ageri da:

a) *… nola bayta ambat diroquena Iaugoycoarequi.*
b) *… ecin ciroquetat, ceren ençun dic 'verbum caro factum est'.*
c) *… cerengatic ezpaytugu Christo gure iaunaren aurrean vitartecoçale obeagoric eta ambat diroquenic, nola Virgina Maria aren ama.*
d) *Procuratçen dugu encomendacera negocio hura arequi guero gueyen diroquenari.*
e) *… eta eztuenac çerças eta ala ecin diroquenac, çer eguinen du.*

Lekukotasun kopuru murritz horrek adieraz dezake aspaldi hasi zela ezaugarri hori galtzen **ezan* laguntzailearen mesedetan. Badirudi galera iparraldeko goi-nafarreraz hasi eta handik hegoaldekora pasatu zela; azkenik, badirudi beranduagora arte hegoaldeko mintzoetan, baina Iruñetik ipar-ekialdera (Erroibarren eta Aezkoan), mantendu dela (cf. Camino 2003b: 80; Padilla 2013).

### *3.2.2.2.7. Iraganeko* -n

Hegoaldeko goi-nafarrera iparraldekotik bereizteko hartu ohi den ezaugarrietarik bat iraganeko adizkietan *-n* morfema galtzea da (Camino 2003b: 54-55). Bizkaiko mendebaldeko hizkera batzuetan ere gertatzen da, baina, agidanean, bilakabide paralelotzat hartu behar dira.

Hegoaldeko goi-nafarrerak berrikuntza hori noiz egin duen jakiten ez da erraza, lehen lekukotasunak agertzerako, hau da, XVI. mende akaburako lekukotzen baitira lehen adibideak: *joaninça*, *arrtu cerauda*, *ninça*, *nio*, *çerauda* (Etxauri, 1598). Hegoaldeko azpieuskalkian idatzitako lehen testu luzeak XVII. mendekoak dira, eta horietan ezaugarri hori ageri da; esate baterako, 1609ko olerki sarituetan iraganeko *-n* galdu ohi da, *erranen níçu*, *chipitú çe*, *gueldití çe* ditu Ezkurrak; hala ere, salbuespen gisa *eri çíran* ere badakar. Aldi berean, *il baçe* dakar Aldatzek 1609ko bere olerkian.

Bilakabidea zaharra izan arren, hegoaldeko goi-nafarrerakoak diren hainbat testutan ez da sistematikoki galtzen iraganeko morfema. Beriainek, esaterako, batzuetan bukaerako *-n* duten adibideak ditu: *jayo çen*, *criatu çuen*, *juntatu cituen*, baina *eguin ce*, *içandu bayçue*, *nay içandu çue*, *bayceude*, *baitcego*. Obanosko 1743ko olerkietan,

eskuarki, *-n* mantentzen bada ere, azken hiru poemetan iraganeko morfemarik gabeko aldaerak daude: *eman ciote*, *etce izan*, *cego*, *zute*, *bacego*.

Beranduagoko testuetan txandaketa berbera daukagu. Besteak beste, ollarandar Markotegiren sermoian bi eratako aldaerak ditugu iraganean (Knörr 1992: 226). Goñerriko testuetan ere bietariko aldaerak ditugu (Camino 2000: 150). Martinez Morentingo bien sermoietan ia beti *-n* gabekoak azaltzen dira, baina behin *arquitu cidan burlataric* 'aurkitu ziren burlaturik' agertzen da (Lekuona 1973: 371; Salaberri 1994a: 11). XVIII. mendearen bigarren erdian eta beranduago, badira txandakatzea erakusten duten adibide gehiago ere: Bonapartek agindutako Artzibarko Urizko dotrinan txandakatzea aise ikus daiteke: *cein concebitu baicen*, *erredimitu baizue* (hala ere hasieran *baizuen* idatzi bide zuen idazleak), *icusi zindue*, *icusi cindue*, *criatu citue* (antza denez, *cituen* idatzi zuen lehenago), *criatu zuen*, *artu zuen*. Egoera berbera erakusten du Elortzibarko Zabalegiko dotrinak ere.

Aztertu ditugun 1750 aurreko testuen artean, iraganeko marka sistematikoki galtzen duen testu bakarra Elizalderen sermoia da; bereak dira: *il ce*, *concebitu baize*, *jayo ce*, *padecitu zue*, *gurucificatu zute*, *il zute*, *orzi zute*. Mende berean, baina beranduago, 1751ko Muruzabalgo sermoian ere (Satrustegi 1987: 82) sistematikoa bide da ezaugarri hau: *jarricen baice*, *izandu ze*, *begiratu cio*, *ezue aguardatu*, *izandu zue*. Sistematikoa da, halaber, besteak beste, Zildozko 1773ko udal agirian (Irigarai 1932); beranduago, Joakin Lizarraga Elkanokoaren obretan *-n* gabeko formak dira nagusi, salbuespen batzuk badiren arren; baita Deikazteluko 1805eko sermoian ere (Etxaniz 1999: 487) eta Mañeruibarko dotrina datatu gabe eta oraindik argitaratu gabean.

Caminok (2003b: 67) ezaugarri horren honako banaketa geografiko hau aurkezten du:

> Iraganeko adizkietan *-n* morfemarik ez izatea, Gesalatzen, Goñerrian, Oltza zendean, Olloibarren, Itzarbeibarren, Eguesibarren, Elortzibarren, hego Esteribarren, Erroibarren, Artzibarren eta Aezkoan gertatzen den ezaugarria da; *-n*-dunak dira Zaraitzuko eta Erronkariko iraganeko adizkiak alderdi batetik eta Burundako, Ergoieneko, Aranazko eta Arakil guztiko —Ihabar eta Urritzola barne— aldaerak. Berebat, *-n*-dunak dira Gulibarko, Atezko, Txulapaingo, Ezkabarteko —Zildozko 1773ko agiria salbu; cf. Irigarai 1932— Odietako, Olaibarko, Ultzamako, Anueko eta ipar Esteribarko hizketak. Oroit *-n*-dunak direla Beriainen idazkietako adizki gehienak eta XVII. mende hasierako Iruñeko sariketako olerkietan, adizki *-n*-dunak nahiz gabeak ditugula.[1277]

### *3.2.2.2.8. Aoristoa*

Zalantzarik gabe, euskarazko testu zaharrek duten ezaugarri nagusietako bat da aoristoa (cf. Lafon 1943; Mounole 2011). Hain zuzen ere, 1600 ondoko testuetan **ezan* eta *edin* indikatiboaz landako perifrasietan agertzen badira ere, XV-XVI. mendeetako lekukotasun batzuetan indikatiboko iraganeko perifrasietan aurkitzen ditugu eta aspektu burutua dute.

---

[1277] Aipu honi dagozkion 4. eta 5. oinoharretan, Caminok ohartarazten du Txulapaingo Beorburun eta Odietan *-n* gabeko batzuk badirela.

Lakarrak (1997) eta, ondoren, Gorrochategui & Lakarrak (2001) gisa horretako aditzak ez agertzea irizpidetzat hartu dute 1600 ondoko euskara zaharra euskara arkaikotik bereizteko.

Nolanahi ere den, badirudi goi-nafarreraz aoristoa lehenago galdu zela. XVI. menderako ez dago aoristoaren arrastorik testu nafarretan, ez trinkorik ez perifrastikorik.[1278] Zehazki esanda, aurkitu ditugun aoristodun adibide bakarrak 1620an Isastik bildutako errefrauetakoak dira, eta bertan aoristo trinko zein perifrastikoak ditugu:

a) (30) *Eliza ceguienac aldarea, aldaria ceguienac abbadea* «El que hizo la yglesia el altar, el que hizo el altar el abad».
b) (44) *Guezurra nenzan Guetarian ni ichean ta ura atarian* «Mentira dige en Guetaria, yo en casa y ella a la puerta».
c) (50) *Illac aguin zeguian, bicia bere naya* «El muerto mandó, y el vivo hizo lo que quiso».
d) (82) *Unaiac arutz citean, gastac aguer citean* «Los baqueros riñieron, los quesos parecieron».

Ezagun denez, errefrauek lehenagoko hizkuntz egoera islatzen dute (cf. Lakarra 1996; Mounole 2011: 14) eta, beraz, errefrauetako aoristoak ez dira lekukotzen diren garaikoak, lehenagokoak baizik.

Ondorioz, badirudi XVII. menderako galdurik dagoela Nafarroa Garaian. XVI. mendean egoera zein zen jakiteko oztopo gehiago dago, ez baitugu iraganeko adizki ugari; halere, ez dirudi orduan aoristoa emankor zenik: mendearen akabuko Aresoko otoitzetan ez da halako adizkirik ageri, ezta XVI. mendeko gainerako testu eta esaldi laburretan ere.

### *3.2.2.2.9. Geroaldia*

Euskaraz geroaldia egiteko erabiltzen diren morfemen araberako sailkapena egingo bagenu, hiru eremu bereiziko genituzke: *-go* & *-ko* / *-en* & *-ko* / *-en* & *-ren*.

Ezagun denez, lehena mendebalde zabalean erabiltzen da —Araba, Bizkaia eta Gipuzkoa—; azken konbinazioa, bereziki, ekialdekoa da. Aldiz, erdialdeko zati handi batean —Lapurdi eta Nafarroa Garaian, batez ere—, testuak ditugunetik,*-en* erabiltzen da *-n*-z amaitu partizipioa duten aditzekin. Goi-nafarreraz idatzitako testu zaharretan ondoko adibideak aurki daitezke, besteak beste: *emanen* dugu 1674ko Berako olagizonaren gutunean, *hizanen tuc* 1696ko Artaxoko auzi agiri batean, *erranen* 1729ko sermoian. Hala ere, *esango* dugu Elizalderen 1693ko gutunean, eta *eguingo* eta *izango* ditugu Muruzabalen agertutako 1751ko sermoi batean, baina *juanen*, *izanen*, *inen* daude testu berean (Satrustegi 1987). Apalauzak (2012: 366) erakusten duenez, Larraungo Albiasutik mendebaldera hasten da *-go* agertzen.

Bestalde, egungo hizkera nafar ugaritan *-en* duten geroaldiko formek aldaketa jasan eta *izain*, *emain*, *esain* eta gisakoak dituzte. Ezaugarri hori XVIII. mendearen biga-

---

[1278] Dena den, XVI. mendean iraganeko adizki oso gutxi ditugu; hauek aurkitu ditugu: *jayo çan*, *[Jayo] çen*, *igaro çuen*, *[sac]rificatu çuen*, *il çuen*, *jautsi cen*, *resu[citat]u cen*, *igo çuen* (AresoOtoi), *atra çuen*, *içandu çuen* (Iruñea, 1596), *joaninça*, *arrtu cerauda*, *aguertu ninça*, *galdetu nio*, *erran cerauda* (Etxauri 1598).

rren erdialdetik aurrera nagusitzen da, lehenagoko testuetan ez baita halakorik agertzen. Elizaldek behin bakarrik *egoin* du 1735ean, baina gainerako kasu guztietan *-en* erabiltzen du. Gerora, ordea, ugaritzen hasten dira forma berriak: *essain* erabiltzen du, adibidez, baztandar Mikelestorenak 1749an idatzitako dotrinan, eta Juan Martin Iberokoak *joein*, *emein* & *emeiñ* eta *egoin* ditu, baina baita *egonen*, *joanen* eta *emanen* ere (Ondarra 1996b: 650). Alde horretatik, oso adierazgarria da Satrustegik (1987: 70) argitaratu zuen xviii. mende hasierako sermoi baten aldaera modernoago batean *izanen* → *izain* eta *emanen* → *emein* aldaketak egin zituela kopiagileak.[1279]

Gainerako aditzetan sistematikoki *-ko* da goi-nafarrera arkaiko zaharrean agertzen den morfema; salbuespen gisa, Amenduxen olerkia aipa daiteke, bertan *baturen* ageri baita. Dena den, behe-nafarreraren eragina izan lezake (ik. § 2.2.12). Salaberrik (1996: 94) aipatzen duenez, Nafarroako testu zaharretan ez dago geroaldiko *-ren* morfemaren adibide askorik, eta bi kasu ematen ditu: Amenduxena eta *etorriren da* xviii. mende bukaerako Frantzisko Antonio Martinez Morentingoaren sermoi batean; hala ere, testu berean *egorrico dituela* agertzen da.

### *3.2.2.2.10. *Edun-en iraganeko adizkiez bi hitz*

Euskaraz, **edun* aditzaren iraganeko adizkietan —eta formalki haiekin lotutako irrealisetan— aldeak aurkitzen ditugu hizkeren artean 1. eta 2. pertsona ergatibo pluraletan: *-n-* dute batzuek, besteek *-nd-*. Hori dela eta, *genuen* eta *genduen* ditugu hizkeren arabera. Halaber, lehen bokalean ere bada alderik; *ginuen* dute batzuek eta *ginduen* besteek.

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean, lehen lekukotasunetarik *-ind-* agertzen da, ez besterik; honatx adibide zenbait: *baçindu* (Iruñea, 1594), *liçençiaric paguindu* (ImarKop), *çor guinduen*, *erreçebitu guinduenas* (Ber*Dot*), *bayquinduce* (Ber*Meza*, Ber*Dot*), *cinduela* (Ber*Meza*), *aurquitu cinduenean* (ObanosBer).

Bestalde, berritzaile bide dira Bortziriak. Bertan, analogiaz-edo, *gueninduen* ageri da Joseph Elizalderen gutunetan. Testu zaharretan ez dugu beste inon aurkitu halakorik.

### *3.2.2.2.11. Bigarren pertsona pluraleko* -zue > -zie

Ekialde zabaleko hainbat hizkeratako aditzetan *-zue* > *-zie* aldaketa gertatu da bai adizkietan bai bigarren pertsonako izenordainetan; hartara, adibidez, *duzue* > *duzie* egin dute hizkera batzuek. Zuazoren arabera (2008: 160), Ipar Euskal Herrian Uztaritzetik Zuberoa bitartean agertzen da aldaketa hori.

Bilakabide horrek ez du Nafarroa bere osotasunean hartzen, baina zenbait hizkera nafarretan agertzen da. Caminok (2003b: 76) dioenez, xviii. mendeaz geroztik, ondoko lekukotasun eta herrietan agertzen da *-zie*: 1729ko sermoian, Ergoienean, Goñerrin, Oltza zendean, Eguesibarren, Txulapainen, Ezkabarten, Atetzen, Odietan, Ultzaman, Anuen, Esteribarren, Erroibarren, Artzibarren eta Aezkoan. Areago,

[1279] Fray Felix Langarika bide da kopiatzailea, berak bildutakoen artean baitago. Egun Euskaltzaindiaren esku dago Muruzabalgo beste hainbat sermoirekin batera. Pruden Gartzia eta Josune Olabarriari esker ikusi ahal izan ditugu sermoi horien digitalizazioak. Bihoazkio eskerrak, beraz, Euskaltzaindiari eta Satrustegiren sendiari, eskuizkribu horiek ikusteko eta ikerketan erabiltzeko baimena emateagatik.

bigarren pertsona pluraleko atzizkien aldaerek hizkerak bereizteko balio bide du: *-ze* aldaeraren hedadura zabala eta banatzailea da, Gesalatzen, Goñerrin, Gulibarren, Eguesibarren, Zabalegiko predikuan eta Izarbeibarren agertzen da, baita Baztangoizan ere (Camino 2003b: 76).

Lekukotasunek erakusten dutenaren arabera, esan liteke bilakabidea berria dela Nafarroan, ez baita 1729an baino lehenago lekukotzen. Gainera, sermoi horixe da 1750 aurretik ezaugarri hori duen lekukotasun bakarra; bertakoak dira ondokoak: *zien*, *diciet*, *tucie*, *eztaquicie*, *ducien*. Mende berekoa den Elizaldek ez du bilakabide horren adibiderik, ezta lehenago Beriainek, 1609ko olerkiek edo iparraldeko goi-nafarrerako testuek ere: *baduçue* (ElOl), *duçuen*, *duçuela* (Ber*Meza*), *didazue* (Goizueta, 1633), *ezayozue*, *ezaizue* (ElizalGut).

### *3.2.2.2.12.* NOR-NORI-NORK *saileko* -i(n)- *erroko* -it- *eta* -zki- *pluralgileak*

Goi-nafarrerazko ezaugarri esklusibotzat hartu izan da NOR-NORI-NORK saileko *-zki-* pluralgilea *-it-* morfemak ordezkatzea; ikus, besteak beste, Zuazo (1998a: 215) eta Camino (2009: 348). Interesgarri da, dena den, gaur hedaturik den ezaugarri hori noiz agertzen den begiratzea.

Goi-nafarrerazko testuei begiratzen badiegu, ikusiko dugu XVIII. mende bukaerarako *-it-* morfema pluralgilea agertzen dela; esate baterako, Joakin Lizarraga Elkanokoaren kopletan *ditio* dago. Lehenagoko lekukotasunetan, ordea, ez da *-zki-* → *-it-* erregelaren aztarnarik kausitzen. Beriainen eta Elizalderen testuetan *-zki-* erabiltzen da; eta, oro har, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean beti da *-zki-*. Hala ere, testu batean aurkitu dugu *-zki-* → *-it-* aldaketa. Hain zuzen ere, Berako olagizonaren 1676ko gutunetan *bidaldu ditidazunac* eta *emanen tidazu* agertzen dira.

Esan dugunez, hortaz, 1750 arterainoko gainerako testu zaharrenetan ohiko *-zki-* atzizkia agertzen da; eta pluralgile horixe dugu, halaber, Satrustegik argitaratu zituen 1756, 1758 eta 1769ko Ororbiako sermoietan (Satrustegi 1987: 92, 96 eta 104); Markotegik bere dotrinan *-zki-* erabili ohi du, baina *dition* bat ere badu (Knörr 1992). Bistan dago, beraz, *-zki-* → *-it-* berrikuntza, analogiaz-edo, hasi XVII. mendean hasi zela, baina erregela ez zen erabat orokortu XVIII. mende bukaerara arte.

Dena den, Zelaietak (2008: 97) dakarrenez, berrikuntza ez da iritsi Leitzara, bai, ordea, Goizuetara (ikus, halaber, Reguero 2015b). Baztanen ez bide dago; bai, ordea, ondoko Ultzaman eta Bidasoaldean (Erdozia 2008: 189).

### *3.2.2.2.13.* -te *vs* -e *pluralgileak*

Euskarazko zenbait aditzetan *-e* eta *-te* pluralgileen arteko txandaketa dugu, euskalki eta hizkeren artean: *daue* : *due* : *dute* : *die*. Traskek (1995: 231) **-de* zaharrago bat berreraiki zuen pluralgilearen protoformatzat. Kokagunearen arabera, **-de* > *-te* egin zen txistukari ondoren, **da-toz-de* > *datozte*, eta **-de* > *-e* bokal ondoren, **da-dude* > *daude* > *d(a)ue*. Dena dela, gerora hizkera batzuetan, *-te* hedatu zen analogiaz, lehenago *-e* zegoen adizkietara.

Hedatze analogiko hori ez da euskalki guztietan berdin gertatu, eta gertatu denetan ez da maila berean izan. Erdiguneko hizkerek, gipuzkerak, lapurterak eta goi-nafarrerak behinik behin, *-te* pluralgilea aditz gehiagotara hedatu dute.

Merezi du aztertzea atzizki horrek adizkien arabera izan duen bilakabidea eta, batetik, laguntzaileei eta, bestetik, trinkoei begiratzea, dirudienez ez baita bera hedadura. Gainera, laguntzaileen artean ere aldeak daudenez, zatika begiratuko dugu.

3.2.2.2.13.1. *Izan* aditzaren bigarren pertsonako pluraleko morfema

Nafarroan, *izan* aditzaren pluraleko bigarren pertsonan *-te* atzizkia agertzen da: *çarate* dago Zigako 1576ko esaldian, *çarete* Orokietan 1578an eta *çarate* darabil Beriainek, *zarate* agertzen da 1729ko sermoian. Beranduagoko Joakin Lizarragak ere *zarate* erabiltzen du. Dena den, trinko moduan *çare* 'zarete' (Baraibar, 1649) ere lekukotzen da. Ohart gaitezkeenez, Baraibarkoa eta Orokietakoa salbu, gainerakoak *zara* + *-te* dira, eta testu zaharretan *zarete* behin lekukotzen da.

3.2.2.2.13.2. NOR-NORK saileko ergatiboko hirugarren pertsonako pluralgilea

Bestalde, NOR-NORK saileko aditz laguntzaileetan ere *-te* agertzen da, eta pluraleko hirugarren pertsonako ergatibo komunztadurari dagokio. Sail horretan indikatiboan **edun*-ekin eta gainerako moduetan **ezan*-ekin agertzen da. Lekukotasunek erakusten dutenez, aspaldikoa da atzizki horren erabilera, eta dagoeneko XV. mendean lekukotzen da: *dute* (ZalbGut), *bizate* (KondestBer). XVI. mendean egoera bertsua da: *dute* (Gorriti, 1551), *dute* eta *duten*, baina pluraleko *duen* 'duten' ere badago (Olatzagutia, 1548), *dute* (Urdiain, 1597).[1280] XVII. mendean bide beretik doa: *eztizaten*, *bainaute* (BeraGut) eta *dezatela*, *badute* (JElGut).

Olatzagutiko arestiko adibideko txandaketak erakuts dezake Nafarroaren erdiguneko berrikuntza ez dela erabat iritsi mendebaldeko ertzera —Zaraitzu eta Erronkaribarren ere ez da berrikuntzarik—. Areago, Gipuzkoa ondo-ondoan dagoen Intzan 1610ean *çaitue* 'zaituzte' dugu eta 1611n bi aldiz *due*. Herri bereko 1772ko eliz agindu batean *dezen* 'ditzaten' dugu (Satrustegi 1987: 131-133). Bestalde, *due* / *zuen* 'zuten' ageri dira Nafarroako mendebaldekoa, Leitza ingurukoa, bide den XVIII. mendearen bigarren erdialdeko dotrina argitaragabe batean ere (Reguero prestatzen-1). Zuazok (2013: 83-86) Aralar inguruko herrietan *due* 'dute', *zaittue* 'zaituzte/zaituztete' eta *dezakee* 'dezakete' gisako adizkiak jaso ditu. Apalauzak (2012: 352) dioenez, Larraundik mendebaldera ez da *-te* agertzen. Nafarroan erdialdera eginda, ordea, Berianek *-te* pluralgiledunak zerabiltzan: *dute*, *bezate*, besteak beste, harenak dira. XVIII. mendean, Elizaldek *dute* erabiltzen du; Nafarroa erdialdeko 1743ko bigarren sermoian ere *zuten* eta *duten* daude, eta 1748koan *zaituztela* eta *zuten* ditugu. Goizuetan ere *-te* dago XVIII. mendearen erdialdean (Reguero 2015b).

3.2.2.2.13.3. NOR-NORI saileko datiboko hirugarren pertsonako pluralgilea

NOR-NORI sailean *-te* pluralgilea hirugarren pertsonako datibo pluraleko markatzat agertzen da. Beriainek berak *zayote*, *çayzquiote*, *bayçayote* dakartza. Elizalderen dotrinako adibidea da, halaber, *zaizquioteney*; 1750eko Orrioko eliza-aginduan *zayoten* daukagu. Dena den, adibide gutxi ditugu, eta ezin hedadura zein den zehatz jakin.

---

1280 1597ko Urdiaingo lekukotasunean *dute* dago, baina gaurko euskaraz *dai* erabiltzen da (Zuazo 2010a: 134).

Gainera, *sobracen zaien* eta *iduricen zaien* daude Baztango 1750eko eliza-aginduan (Reguero 2019); beraz, ez dirudi ezaugarria Baztanera badenik. Bestalde, Burundan ere ez dago *-te*: *zayei* 'zaie', etab. dira, besteak beste, bertan jaso diren adizkiak (ik. Bonaparte 1881b edo Zuazo 2010a). Nafarroan bertan Lizarraga Elkanokoak *zaiote* eta *zaizkiote* gisakoak erabiltzen ditu, eta Nafarroatik kanpo, autore zahar batzuek ere bai: Leizarragak *zaizkiote* du, baina singularrean *zaie*, eta Aranbillagak eta Haranederrek *zaiote* dute, baina *zaie* ere bai azken honek, Pouvreauk eta Materrak bezala, besteak beste.

### 3.2.2.2.13.4. NOR-NORI-NORK saileko pluraleko adizkietako morfema

NOR-NORI-NORK sailari dagokionez, *-te* pluralgileak ergatibo pluraleko hirugarren pertsonari egiten dio erreferentzia, baina hirugarren pertsonako datiboari ere egin diezaioke erreferentzia pluralgileak. Bi kasuetan, lehen lekukotasunak agertzerako lekukotzen da: *didate* dugu Olatzagutiko 1548ko ezkontzako fedean, eta 1649an *dizquidate* agertzen da Larraungo esaldi batean. Iruñeko 1596ko esaldi batean *diote*. Beriainek ere *dizquioteçun*, *dioteçula*, *diote*, *diotegula* ditu; horietan *-te* datiboko pluralgilea da. Era berean, XVIII. mendean ergatiboko eta datiboko pluralgiletzat erabiltzen da *-te*: *diote* (Serm1743-1), *eztioten asistizen* (Serm1743-2), *diotegu* (Orrioko 1750eko eliza-agindua). Gipuzkoa ondoko Areson XVI. mende bukaeran *-e* dugu oraindik: *dizquigueney*.

Laguntzaile horiezaz gain, Beriainek **erazan* aditz laguntzailearekin ere *-te* erabiltzen du datiboa pluraleko hirugarren pertsona denean: *laçoquete* 'liezaieke', *drazquiotegu*.

### 3.2.2.2.13.5. Adizki trinkoak

Aditz laguntzaileetan ikusi dugunez, aski hedatua dago *-te* pluralgilea; aitzitik, trinkoetan hedadura murritzagoa da. Nagusiki *-te* agertu arren, inoiz *-e* aurki daiteke, arkaismo gisa bada ere: *çare* 'zarete' (Baraibar, 1649), *baitarame* 'baitaramate' (LeitzAuzi), *dauzquien* 'dauzkite, dauzkate' (1743ko 2. sermoia), *dauzquienac* 'dauzkitena, dauzkatenak' (1751ko sermoia; Satrustegi 1987). Dena dela, *dauzquite* erabiltzen du Beriainek.

### 3.2.2.2.13.6. Ondorio batzuk

Arestiko adibideek, zalantzarik gabe, erakusten dute *-te* pluralgilea Nafarroan aski hedaturik dagoela, bereziki, aditz laguntzaileetan: *izan*, **edun*, *-i(n)-*, **erazan* eta **ezan* aditz laguntzaileekin agertzen da.

Esan dugunez, testu zaharretan NOR sailean *-te* pluralgilea dugu bigarren pertsonan, baina gainerako sailetan *-zue* agertzen da NORK bigarren pertsona denean. Halere, XVIII. mendearen erdialdetik aurrera NORK bigarren pertsona denean *-zute* agertzen hasten da; ez, halere, dialektoaren eremu osoan. Esaterako, 1743ko bigarren sermoian *erran zadazute* eta *adi zazute* ditugu eta Goizuetako 1753koan *duzutenac* eta *zaiozute* 'iezaiozue' agertzen dira (Reguero 2015b). Lehenago, ordea, zail da halakorik aurkitzea: 1569an Ezkurran lekukotutako esaldi batean *didaçue* eta *pagatuco derauçue* ditugu, eta XVII. mendeko Joseph Elizalderen gutunetan agertzen dira *ezayozue* eta *eztaquizue* bigarren pertsonako adizkiak.

### *3.2.2.2.14. -z- pluralgilea*

Nafarroa garaiko testu batzuetan **edun* aditzaren iraganeko formetan, absolutibo plurala adierazteko, *-it-* pluralgilearen ordez *-z-* erabiltzen da, erroaren ondotik. Hurrengo adibide hauek Beriainenak dira: *cinducela* 'zenituela', *cinducen* 'zenituen', *bayquinduce* 'baikenituen'. Elizaldek ere badu adibiderik 1735eko dotrinan; berea da *guinduzan* 'genituen'. 1744 inguruko Obanosko bertsoetan *ciñuzan* 'zintuen' agertzen da. Iparralderako, Leitza inguruko XVIII. mende bukaerako dotrina batean *guiñucen* agertzen da, 'gintuen' eta 'genituen' adieretan (Reguero prestatzen-1).

Nolanahi ere, aldaketa hau NORK lehen edo bigarren pertsona denean gertatzen da; ez, ordea, hirugarren pertsonarekin: *citue(n)* usu lekukotzen da.

Bestalde, **edun* aditzaz gain, NOR-NORI saileko *izan* laguntzailean ere agertzen da *-z-* pluralgilea, adibide batean bederen: *zazayztate* (Irurita, 1660). Gainera, adibide horretan ez dago *-ki-* datiboaurrekoa. Materrak, esate baterako, *çatçaizquidala* dakar.

### *3.2.2.2.15.* *Ezan *aditzaren adizkietan* -it- → -zki-

Caminok (2003b) aurkeztu zituen hegoaldeko goi-nafarreraren ezaugarri ia esklusibo bateratzaileen artean dago **ezan* aditzaren pluraleko formetan gertatutako berrikuntza analogikoa. Hain zuzen ere, *-it-* pluralgilea erabiltzetik *-zki-* erabiltzera igarotzen da. Arestian (§ 3.2.2.2.13.4) aipatutakoaren, hots, indikatiboko NOR-NORI-NORK sailean *-i(n)-* aditz laguntzailearekin gertatutakoaren aurkako norabidea dugu **ezan* aditzean.

Dirudienez, erregela hori XVIII. mendean gertatu zen Nafarroan. Lehenago Beriainek *içaçu* erabiltzen du, baina mende hartatik aurrera 1729ko sermoian *erran lezqui* 'erran litzake', *escucha zazquicie* 'entzun itzazue', *adi zazquicie* 'adi itzazue' agertzen dira eta Elizaldek 1735ean *mereji dezazquigun* 'ditzagun' eta *erranzquizu* 'erran itzazu' erabiltzen ditu, azken hori behin eta berriz. Datarik ez duen Larrasoañako sermoian ere *ai bezazquite* 'adi bitzate' dago, eta 1743ko Obanosko bertsoan *uzquizu*, *erranzquizu* eta *arzquizu* agertzen dira. Beranduago, besteak beste, Lizarraga Elkanokoak ezaugarri horren adibide andana du; bereak dira, esaterako, *bezki* 'bitza' edo *guardazquizu* 'guarda itzazu'. Interpretazioan zalantza egon badaitezke ere, Elizalderen 1609ko olerki sarituan agertzen den *mantena ezpagaysqui* 'mantena ez bagaitza' bada, horixe genuke aldaketa horren lehen lekukotasuna (ik. § 2.2.14.3.2).

1750 aurreko testu horietaz landara, berriagoak ere kontuan hartuz, Caminok (2003b: 69) ezaugarria Gesalatzen, Goñerrin, Oltza zendean, Izarbeibarren, Eguesibarren, Ezkabarten, Erroibarren, Artzibarren, Aezkoan eta Zaraitzun agertzen dela esaten digu. Mitxelenak (1982) ezagutzera emandako Zaraitzuko katiximan, adibidez, *santificazquigula* eta *respetazquigula* lekukotzen dira. Halere, testu berean *-it-* ere badago: *onechagula* (< *onets ditzagula*). Leitza inguruko XVIII. mende bukaerako dotrina batean (Reguero prestatzen-1) *esasquizu* dago eta Mikelestorenak ere badu ezaugarri hori.

Dirudienez, ezaugarri hori Nafarroa Garaian erabiltzeaz landara, Lapurdiko ekialdean eta Nafarroa Behereko ibar gehienetan agertzen da; besteak beste, Leizarragak eta Oihenartek hala erabiltzen dute (Camino 2013: 141).

### *3.2.2.2.16.* *Ezan *aditzaren formetan* -a *galtzea*

Goi-nafarrerako testu batzuetan **ezan* aditzaren hirugarren pertsonako formetan amaierako *-a* galdu da. Ditugun adibide gehienak Beriainenak dira: *pensa ezpadez*,

*erran bez*, *erran bales*, *eguin bez*, *alaba bez*, *utci biz*. Dena den, bada adibide gehiago ere: *ar bes* (Etxauri, 1598), *considera vez* (Serm1743-1), *passa balez* (ObanosBer). Elizaldek dotrinan *eraman baliz* dakar, baina baita *baleza* ere. Bestalde, *beza* osorik agertzen da 1656an argitaratutako Ama Birjinaren omenezko erromantzean eta 1748ko sermoian. Mitxelenak (*FHV* § 6.4) Lizarraga Elkanokoaren adibide bi dakartza, eta horietan *-a* falta da: *erran-béz* eta *konfesa balez*.

Mendebaldean ere gertatzen da hau; «Lazarragaren testuan **ezan* (protasietan edo *b-* aurrizkidun jusibozko formetan) eta *etzan* aditzek pairatzen dute erorketa: *lo ete naç* (AL: 1152r), *goarda badez* (A17: 14), *sufri[du] valez* (B10: 6)» (Bilbao *et al* (2010). *Refranes y Sentencias* bildumak *uza vez*, *çe vez aurqui*, *ar bez* adibideak ditu (Lakarra 1996: 184).

### *3.2.2.2.17.* *Ezan + ke → *edun + ke *iraganeko adizkietan*

Hegoaldeko goi-nafarrerazko ezaugarria da iraganean **ezan* aditzaren ordez **edun* erabiltzea *-ke* potentzialeko adizkiarekin. Caminok (2003b: 67) hegoaldeko goi-nafarreraren «bere-berezko» ezaugarritzat aurkeztu eta, besteak beste, Elkanoko ondoko adibideak ematen ditu: *nuke* 'nezake', *induke* 'hezake', *zuke* 'zezakeen'. Caminok ez du zehazten Lizarragaren zein obratatik hartu duen, baina guk, besteak beste, *ez nuke disimulatu* 'ez nezake disimulatu', *ez nuke kunplitu* 'ez nezake kunplitu', *ez nuke ere pasatu* 'ez nezake ere pasatu' aurkitu ditugu predikuetan. Aldiz, kopletan *nola Jangoikoak zuke padezitu* 'Nola Jangoikoak zezakeen padezitu', *nork zuke lotu* 'Nork zezakeen lotu'.

Ezaugarriaren eremua ere zehazten du Caminok (*ibid*.): Goñerri, Olloibar, Oltza, Izarbeibar, Elortzibar, Eguesibar, Erroibar, Aezkoa, Ezkabarte eta Deikaztelu; Zaraitzun ere badira gisa horretako adizkiak.

Testuetan berriagoetan ezaugarria maiz agertzen bada ere, 1750 aurreko lekukotasun zaharretan ez da horren erraza adibiderik aurkitzea. XVII. mendeko adibide bat aurkitu dugu, 1609ko Ezkurraren olerki sarituan *ecin jan çindúquean*. Kasu honetan iraganeko geroaldia da, ez potentziala, beraz, 'ez zenuen jaten ahalko' adiera du. Iparraldeko goi-nafarrerazkoa den 1743ko sermoian, aldiz, *zezaquen* eta *zezaquean* forma orokorrak ditugu.

Caminok (2013: 117) adibide horiek berrikuntzatzat hartzen ditu, horretarako arrazoirik ematen ez badu ere. Gure ustez, bada berrikuntza dela pentsatzeko arrazorik. Batetik, ikusten denez, kasu horietan gehienetan erabiltzen da partizipioa; oso bakan aditzoina, Lizarraga Elkanokoak *etzuque logra*, *ezpaitzuque atzen* eta *ezpaitzuque aparta* dakartza, baina nagusiki partizipioa erabiltzen du. Bestetik, denborak aurrera egin ahala adibideak ugaritu egiten dira.

Edonola ere, gaiak azterketa sakonagoa merezi du, laguntzaile aldaketa baino gehiago perifrasi osoaren aldaketa ere izan baitaiteke, aditzoina izatetik partizipioa izatera ere aldatu delako.

### *3.2.2.2.18. Alegiazko* l- *aurrizkia*

Mounolek (2011: 30-32) azaltzen duenez, XV. eta XVI. mendean *l*-dun aditz laguntzaileak agertzen dira menpeko perpausetan, perpaus nagusiko aditza iraganekoa edo hipotetikoa bada. Gainera, XVI. mendeko autoreek ondoko lau kasutan erabil-

tzen dituzte *l*-dun laguntzaileak mendeko perpausetan, beti ere aditz nagusia iraganekoa denean: konpletiboa denean, helburuzkoa denean, zirkunstantziala denean edo denborazkoa denean. Hala eta guztiz ere, ez da sistematikoa alegiazko aurrizki hori duten adizkien erabilera, eta *z-* ere agertzen da (Mounole 2011: 32).

Goi-nafarrera erdiguneko mintzoa berritzailea izan denez, arkaismo hori topatzea ez da ohikoa. Edonola ere, Beriainek gisa horretako bi adibide ditu esaldi batean: *joan cela* […] *desseorequi cerviçaceco eta agradaceco nay* ***luen*** *gauzetan eta aprovechaceco ayn ocasio onas escacen* ***liola*** *ondasun auniz eta andiac ala arimarendaco nola gorpuçarendaco* (Ber*Meza*).

Bestalde, Olatz Txipiko 1596ko esaldian *lagunic ez luela* ageri da.

### *3.2.2.2.19. Adizki aferesidunak*

Nafarroako eta Lapurdiko kostaldeko hizkerek duten ezaugarria da aditz laguntzaileko lehen silaba galtzea. Mounole & Gómezek (2018) diotenez, adizkietan gertatzen diren kontrakzio horiek perifrasien gramatikalizazioa aurrerantz doala erakusten dute, higatze fonetikoa dela-eta.

1750 aurretik oso gutxi dira adizki aferesidunak dituzten testu nafarrak. Nafarroan lehen aldiz XVI. mendean agertzen da, eta Amenduxek dakar: *icusten tut*. 1610eko Martinez Saratsakoaren lekukotasunean *erraten tuztela* agertzen da eta Artaxon *baituc* 'baitituk' eta *hizanen tuc* 'izanen dituk' ditugu 1696an. Pirinioez bestaldean, sinkopadun adibideak badira ordurako; besteak beste, Etxeparek baditu.

Arestiko lekukotasun goiztiar horiez gain, XVII. mende bukaeran eta hurrengoaren hasieran badira adizki aferesidunak Bidasoa inguruan: 1674ko Berako olagizonaren gutuneko adibideak dira *tuzu* 'dituzu' eta *tidazu* 'ditidazu, dizkidazu'; Miguel Elizalderen gutunetan, *ezaguzen tu*, *ona tugula*,[1281] 1721eko Irungo udal agirietako batean *galdu tugu* 'galdu ditugu' agertzen da. Beranduxeago erdialde-ekialdean ere bada sinkoparik: 1729ko sermoian *vear tucie* 'behar dituzue' dugu eta 1743 ingurukoa den Obanosko bertsoetan *deicen tuzu* 'deitzen dituzu', *erremediatcen tuzu* 'erremediatzen dituzu'; hala ere, azken testu horretan *sendatcen ditu* ere agertzen da.

Testuek erakusten dutenaren arabera, XVII. mendetik aurrera lekukotzen da ezaugarri hori, baina ez da XVIII. mendearen erdialdetik aurrera duen indarraz lekukotzen. XVII. mendeko Bortzirietako lekukotasunetan agertzen bada ere, beste eskualdeetan ez da halakorik. Beriainek, esaterako, ez du gisa horretako sinkoparik, ezta beranduago Elizaldek ere 1735ean. Dena den, lekukotasunen artean dugun aldea kronologiagatik baino gehiago, beharbada, hizkuntzaren erregistroagatik izan daiteke.

Edonola ere, lekukotasunak ikusirik, badirudi Bortzirietako XVII. mende bukaerako hizkerak bat egiten duela Irungo eta Lapurdiko orduko euskararekin; Gazteluzarrek, *zertako tugu hedoiak* eta Etxeberri Ziburukoak *ekhartcen tic*, *eman tutçun* idatzi baitzituzten garai horretantxe.

XVIII. mendearen erdialdetik aurrera Nafarroan jauzi bat ikusten dugu, sinkopadun adizkiak maizago agertzen baitira; besteak beste, Joakin Lizarragaren 1802ko

[1281] Ohart gaitezkeenez, Miguel Elizalderen gutunetan sinkopa gertatzen da; ez, aldiz, hari erantzunez izebak idazten zion gutunean. Horren atzean egon daitekeen arrazoia da, beharbada, garai hartan zaharrek sinkoparik ez egitea; bai, ordea, gazteek.

predikuetan *eztuztenei* 'ez dituztenei' eta *aipatzentú* 'aipatzen ditu' ditugu. Gainera, Bonapartek osatutako aditz-tauletan hegoaldeko goi-nafarrerazko adizkitzat hartu zituen, hala nola *tut*, *tuzu*, *tidazu*, *tiot* eta *tiguzu* gisako pluraleko formak.

### *3.2.2.2.20. Hikako adizkietako* -t

Caminok (2003b: 67) dioenez, hegoaldeko goi-nafarrera hitz egiten duten Goñerrin, Oltzan, Izarbeibarren, Eguesibarren, hego Esteribarren eta Aezkoan alokutiboko maskulinoko adizkietan *-k* → *-t* aldatu da. Dena den, batzuetan *-t-* gehitu da *-k* ez dagoen hikako formetan, Caminok (*ibid.*) emandako *xitxeidata* 'zitzaidaan' adibidean ikusten denez.

Ezaugarri hori, dagoeneko, XVII. mendean agertzen da, eta Beriainek erabiltzen zuen: *ecin* ***ciroquetat****, ceren ençun dic* 'ezin zezakeat, zeren entzun dik meza' (Ber*Meza*). Bestalde, 1729ko sermoian *esticquidatan* 'ez dizkidak + -en'.

### *3.2.2.2.21. -itz- > -etx-*

Iparraldeko goi-nafarrerako hizkera batzuek duten ezaugarrietakoa da **ezan* adizkien pluraleko formetan *-itz-* > *-tx-* egitea: *ditzan* > *detxan.*

Lekukotasun kopuruagatik, ez da erraza jakitea bilakabide hori noiz sortu eta hasi zen hedatzen. Hegoaldekoa izan arren, Beriainek, esaterako, *ditzaque* erabiltzen du, baina behin bakarrik du adizki hori. Larrasoañako sermoi data gabean, artean, *dizagun* ageri da.

Beraz, ezagutzen ditugun *-itz-* > *-tx-* bilakabidearen adibide zaharrenak 1743koak dira: *dechoquena* 'diezazkiokeena' dugu orduko lehen sermoian eta *eztechan* 'ez ditzan' ageri da bigarrenean.

Agidanean, beraz, bilakabide hori goi-nafarrerazko erdiguneko hizkeretan gertatu da, XVIII. mendetik aurrera.

### *3.2.2.2.22. Zenbait aditzen erregimenaz*

Ezagun denez, hizkeren eta garaiaren arabera, zenbait aditzek duten erregimena ezberdina da. Jarraian, gisa horretako aditz batzuk ikusiko ditugu:

*Zor izan*: Aditz hau NOR-NORK sailekotzat hartzen da orokorrean goi-nafarreraz: *çor naiçun* (Adios, 1650), *zor guinduen*, *zor zuten*, *zor duena* (Ber*Meza*), *zor dugu*, *zor duguney* (Ber*Dot*), *zor gaitustenei* (El*Dot*). Dena den, bi kasutan datiboa aurkitu dugu, hain zuzen ere, Beriainen dotrinan: *zor diogun* agertzen da. Iparraldeko goi-nafarreraz adibide bakarra aurkitu dugu eta bertan *zor dizudanaren* (BeraGut) dago.

*Eskatu*: Aditz honek ez du beti aditz erregimen berbera. NORK-NOR zein NOR-NORI-NORK laguntzailea du. Beriainengan txandaketa aurkitu dugu: *escatu baytiot*, *escatu dioguna* (Ber*Dot*), *ezpaytio escatuco* (Ber*Meza*), *escatuco diogu* (Ber*Meza*). Dena den, kasu batean NOR sailekotzat hartu da: *escatu nayçen* (Ber*Dot*).

*Ohartu*: Beriainek aditz hau NOR-NORI eta NOR sailetako laguntzaileekin erabiltzen du: *oarçen çayonean* (Ber*Dot*), baina *goarcen dela* (Ber*Dot*).

*Lagundu*: Osagarririk badu, NOR-NORI saileko adizkiekin erabiltzen da: *lagun ezpalequio*, *lagun daquigun*, *laguncen çayzquigu* (Ber*Dot*). Bestela, NOR saileko erabiltzen da: *respondacen du mezan laguncen denac*; *sacramentuac ongui errecebiceco laguncen da auniz meza ongui ençutea* (Ber*Meza*); *Cer gauza laguncen dirade casto içateco*

(Ber*Dot*). Elizaldek, aldiz, NOR-NORI-NORK erabiltzen du 1735eko dotrinan: *lagunduco digu* (56).

### 3.2.3. Ondorio zenbait

Fonologiaren atalean egin bezala (§ 3.1.4), hemen ere bi taulatan bildu ditugu dialektologikoki zein kronologikoki interesgarri iruditu zaizkigun berrikuntzak batetik, eta galerak bestetik. Ezaugarri bakoitzaren ondoren, lehen aldiz noiz lekukotzen den jarri dugu berrikuntzetan; aldiz, noiz galtzen den, edo noiztik aurrera ez den lekukotzen, adierazi dugu galeretan. Azkenik, ezaugarri bakoitzak duen hedadura ere jarri dugu.

**3.3. taula**

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean morfologian gertatu diren berrikuntza positiboak

| | Azpiatala | Berrikuntza positiboak | Noiztik | Hedadura |
|---|---|---|---|---|
| 1 | § 3.2.1.2 | *o(h)ec > obec / ebec* | XVIII | Hegoalde-erdialdea |
| 2 | § 3.2.1.2 | Erakusleetan *g-* | XVIII | Ipar-ekialdea |
| 3 | § 3.2.1.3 | *Gueuren* pleonastikoa | XVII | Hegoalde-erdialdea |
| 4 | § 3.2.1.7 | Ergatiboan *-ek* | XV | Orokorra[1282] |
| 5 | § 3.2.1.8 | *-eri* datiboan | XVIII | Orokorra |
| 6 | § 3.2.1.10 | Instrumentaleko *-s* | XIII | Orokorra[1283] |
| 7 | § 3.2.1.14 | Bizidunetan *baita-* | XV | Orokorra |
| 8 | § 3.2.1.15 | *-kotz* | XVI | Orokorra |
| 9 | § 3.2.1.16 | Ablatibo pl. *-etatik* | XVII | Mendebaldea |
| 10 | § 3.2.2.1.2 | Partizipio pleonastikoak | XVII | Orokorra |
| 11 | § 3.2.2.1.3 | *-te* → *-tze* aditz-izenetan | XVI | Orokorra |
| 12 | § 3.2.2.1.3 | *-itzen* aditz-izenak | XVII | Orokorra |
| 13 | § 3.2.2.2.1.3 | *Eduki*-ren adizkietan *-zki* | XVI | Orokorra |
| 14 | § 3.2.2.2.3 | *Dut*, *duzu…* | XVI | Orokorra |
| 15 | § 3.2.2.2.4 | *-i(n)-* erroa NOR-NORI-NORK sailean | XVI | Orokorra |
| 16 | § 3.2.2.2.5 | *Dative flag* **ezan* aditzarekin | XVII | Baztan-Bortziriak |
| 17 | § 3.2.2.2.5 | **Erazan* | XVI | Hegoaldea (+ Err., Zar.) |
| 18 | § 3.2.2.2.12 | *-zki-* → *-it- -i(n)-* erroaren adizkietan | XVII | Iparraldea |
| 19 | § 3.2.2.2.13 | *-te* pluralgilea | XVI | Orokorra |
| 20 | § 3.2.2.2.15 | *-it-* → *-zki-* **ezan-* aditzaren adizkietan | XVIII | Orokorra |
| 21 | § 3.2.2.2.16 | *-eza > -ez* | XVI | Orokorra |
| 22 | § 3.2.2.2.17 | **Ezan + ke* → **edun + ke* | XVI | Hegoaldea |
| 23 | § 3.2.2.2.19 | Adizki aferesidunak | XVIII | Orokorra |
| 24 | § 3.2.2.2.20 | Hikako *-t* | XVII | Hegoaldea |
| 25 | § 3.2.2.2.21 | *-itz- > -etx-* | XVIII | Erdialdea |

1282 Dena den, Nafarroako mendebaldeko testuetan *-ak* ere agertzen da.
1283 Bortziriak legoke, testu zaharrak oinarri harturik, eremutik kanpo.

**3.4. taula**

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean morfologian gertatu diren berrikuntza negatiboak

| | Azpiatala | Berrikuntza negatiboak | Noiz | Egoera |
|---|---|---|---|---|
| 1 | § 3.2.1.1 | Artikulu hurbila | XVII | Orokorra |
| 2 | § 3.2.2.2.1 | Trinkoen erabilera | XVIII | Orokorra |
| 3 | § 3.2.2.2.4 | **eradun* | XVIII | Hegoaldea |
| 4 | § 3.2.2.2.6 | **iron* | XVII | Orokorra |
| 5 | § 3.2.2.2.7 | Iraganeko *-n* | XVI | Hegoaldea |
| 6 | § 3.2.2.2.8 | Aoristoa | XVII | Orokorra |
| 7 | § 3.2.2.2.18 | *l-* alegiazkoetakoa | XVII | Orokorra |

Lehendabiziko taulan ikus daitekeenez, ezaugarri zaharrenak hedadura zabalena dutenak dira, eta goi-nafarreraren muga gainditzen dute. Hor ditugu, besteak beste, (10) *izandu* eta *egondu* bezalako partizipio pleonastikoak, aditz-izenak egiteko *-tze* atzizkiaren hedadura (11), **edun*-en adizkietako *-u-* erroa (13), *-te* pluralgilea (18). Horiek guztiak dagoeneko lehen testuetarako ageri dira. Aitzitik, berriagoak direnak eskualdekoak dira, eta goi-nafarreraren barneko azpidialektoak edo hizkerak bereizten dituzte. Dagoeneko XVII. mendean azpihizkerak bereizten dituzten ezaugarriak badira; ondoko hauek adibidez *-zki-* → *-it-* indikatiboko NOR-NORI-NORK sailean (18) iparraldeko goi-nafarreraz gertatzen da bereziki; iparralde horretan eremu are txikiagoa du indikatibotik landako NOR-NORI-NORK saileko *dative flag* delakoak; aldiz, hegoaldeko testuetan bakarrik aurkitu ditugu **edun + ke* erabiltzea **ezan* aditz laguntzailearen lekuan (21), indikatibotik landako NOR-NORI-NORK sailean **erazan* erabiltzea (16) edo hitanoko formetan *-t* agertzea (23).

Galerez den bezainbatez, garai desberdinetakoak izan arren, orokorrak dira ikusi ditugun gehienak: artikulu hurbila galtzea (1), trinkoen erabilera murriztea (2), **iron* laguntzailea galtzea (4), aoristorik ez izatea garai historikoan (6)…; aldiz, eremu murritzagoa izan du iraganeko *-n*-ren (5) edo **eradun* galtzeak (3).

Oro har, dialektologian arkaismoak ez dira bereizgarri sailkatzailetzat hartzen, baina arkaismo batzuk mantentzeak dialektoaren barne batasuna isla lezake (ik. § 1.2.1). Morfologia aldetik, goi-nafarrerako hizkera batzuek badute arkaismo esanguratsu bat; NOR-NORI sailean *-ki-* erroa erabiltzea.[1284] Besteak beste, Lizarraga Elkanokoaren sermoietan agertzen dira ondo adibideok: *zor zekion* 'zor zitzaion', *ellegatu zekion* 'ailegatu zitzaion'. Caminok (2003a: 455) Gesalatzen, Utergako kristau ikasbidean, Goñerrin, Burundan, Sakana erdialdean, Arakilen, Oltzan, Izarbeibarren, Eguesibarren, Imotzen, Atetzen, Ezkabarten, Odietan, Anuen, Erroibarren eta Artzibarren aurkitu ditu, XVIII. mendean; baina ez da beti agertzen erro hori, hizkera batzuek iraganean bakarrik baitute.

[1284] Aldaik (1999: 267) «arkaismo baten kontserbazio partzial» moduan hartzen du, eta horrela utzi dugu guk. Edonola ere, gaiak ikerketa sakonagoa merezi du; besteak beste, interesgarria izan daiteke perifrasi horren adibide guztiak jaso, garaika, eta aditzoina ala aditz nagusia erabiltzen den begiratzea.

Ezaugarri hori arkaismotzat hartzen bada ere, ez dugu 1750 aurreko lekukotasunetan aurkitu: NOR-NORI saileko *-ki-* erro hori ez zaigu testu zaharrenetan agertzen. XVIII. mendearen lehen erdialdekoa bide den Larrasoañako sermoi data gabeko *eman cequion* 'eman zitzaion' eta *iduritu cequio* 'iruditu zitzaion' dira aurkitu ditugun adibide zaharrenak (E § 5.1). Beriainek dagoeneko *cizayzquion* dakar, eta Elizaldek *cizaigu* dauka.

## 3.3. SINTAXIA

Morfologiari dagokion atala ikusi ondoren, hurrengo honetan sintaxiaz jardungo dugu. Bertan lehenik hitz hurrenkera aztertuko dugu (§ 3.3.1); jarraian erakutsiko dugu ahozko lekukotasunez landaraz, goi-nafarrerazko testu zaharretan badela 'Xrekin Y' gisako egitura kopulatibo zaharraren aztarnarik (§ 3.3.2). Bestalde, genitibozko objektu zuzenaz (§ 3.3.3), Linschmann-Aresti legeaz (§ 3.3.4), datiboko eta pluraleko komunztadura gaiez (§ 3.3.5), osagarritzat aditz-izena eskatzen duten aditzez (§ 3.3.6) eta zenbait mendeko perpausez (§ 3.3.7) arituko gara. Azkenik, ondorio batzuk emango ditugu (§ 3.3.8).

### 3.3.1. Hitz hurrenkera

Lekukotasun idatzietan ikusten dugunez, euskarak, bere bilakabidean, zenbait elementuren hurrenkera aldatu du; eta, hain zuzen ere, testu zaharrek hurrenkera zaharrago baten berri ematen dute (Reguero 2013a). Atal honetan goi-nafarrera arkaiko eta zaharrak erakusten dituzten zenbait hurrenkerari begiratuko diegu. Hasteko, izenlagunak aztertuko ditugu (§ 3.3.1.1); ondoren, erlatiboari begira jarriko gara (§ 3.3.1.2). Jarraian, *bertze*-ren (§ 3.3.1.3), posesiboen (§ 3.3.1.4) eta *asko* zenbatzailearen (§ 3.3.1.5) kokaguneak aztertuko ditugu eta, amaitzeko, ezeztapenaren lekuaz (§ 3.3.1.6) jardungo dugu.

#### *3.3.1.1. Izenlagunak*

Euskara historikoan, oro har, izenlaguna izenaren ezkerrean agertzen da: *Erromaco leguea*, besteak beste. Dena den, testu zaharretan badira alderantzizko hurrenkera duten adibideak: Lazarragak, adibidez, *Ama enea* (AL: 1144r), *berva gureac* (A27: 912) eta *Gaztelu Guebaracoan* (A1: 27) dakartza (ikus Reguero 2013a: 449-451). Dirudienez, adibide horiek euskarak izan duen deriba tipologioaren erakusgarri dira (Lakarra 2006: 270).

Nafarroan ditugun lekukotasun zaharretara jotzen badugu, Erdi Aroan hurrenkera horren adibideak maiz topa daitezke: *Munio Iturraldeco* (Iratxe, 1203), *Eneco Erroco* (Iratxe, 1219), *Pero Garcia Bazterreco* (1366), *Sanso Urraquarena* (Arlegi, XIII. m.), *Guarcea Ansorena* (Arlegi, 1247). Dena den, ez da falta izenlaguna ezkerrean duenik ere: *Bazterreco ardançea* (Iratxe, 1164), *Iriondoco soroa* (data gabe), *Ançare soroa* (Iratxe, 1397) (Reguero 2012b: 146-147). Bidenabar, adibide horietan ikusten denez, hurrenkera zaharra pertsona izenetan mantentzen da fosildurik.

Beranduago, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean bada hurrenkera zaharraren arrastorik pertsona izenetatik landara: *musu aubecotic* (Lekunberri, 1551), *advogada*

*gurea* (AresOtoi), *Borz iri Nafarroacoac* baina testu berean *Lesacaico borz iriac* (Bera-Lesaka, 1615), *bi paper zureac* (JElizaGut). Beriainek ere gisa horretako batzuk baditu: *itzac consagraciocoac*; *tempestade diluvioco andi ura*, *martirologio Erromacoaren*, *Eliza sandu Erromacoac*, *libru devocioscoac*, *obra misericordiascoac*, *Erreguia Portugalecoa*, *missale Erromacoac*.

Edonola ere, gutxi dira hurrenkera zaharra mantentzen duten adibideak, eta lehen lekukotasunetako [Izlag + Iz] egitura ere agertzen da, ondokoak adibide: *Erromaco legueac* (EzkonAgoitz), *Erromaco eche sanduac* (EzkonEspar), *aquerr larreco çapu larru edequiçallea* (Lesaka, 1626), *Calvarioco oyanera*, *ceruco eta lurreco erreguea* (Ber*Meza*).

### *3.3.1.2. Erlatiboak*

Izenlagunekin gertatu bezala, inoiz erlatibozko perpausa izenaren eskuinean agertzen da zenbait lekukotasun zaharretan. Hori ere euskarak izan duen deriba tipologikoaren erakusletzat hartu izan da (Lakarra 2006). Dena den, orain Krajewskak (argitaratzear) erakusten duenez, hurrenkera hori ez da zertan deriba tipologikoaren ereduaren arrastoa izan, gaztelaniaren eragina ere izan baitaiteke.

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharreko testuei begiratuta, aurkitzen dira hurrenkera horren adibideak. Besteak beste, Uitziko 1509ko ezkontza fedean *Johana presentean dagoenau* agertzen da; eta, mende bete beranduago, Elizalderen 1609ko olerkian ageri dira ondoko biak: *çati nay duçunetan* eta *ogui beti dirauena*. Halaber, Beriainek hurrenkera horren adibide zenbait ditu:

a) *Gauza eguin eta meregitu cizquigun guciequi* (16r).
b) *Vicia beñere acabatuco eztena* (54r).
c) *Vere obra eta ondasun guregatic vere vician eta heriotzean eguin cituenequi* (108r).

Nolanahi ere, erlatiboa ezkerrean duten perpausak nagusi dira, hemen adibide bat: *meregitu cisquigun ondasunac*.

XVIII. mendea ez da bestelakoa. Elizalderen dotrinan ondoko adibidea dugu: *colera itsucen gaitustenec*. 1743ko bigarren sermoian *anima viziza ematen ziona* agertzen da. Beranduago, 1748ko sermoian *aize abrasazen duena, guztia consumizen duena* agertzen dira. Bide beretik, 1751ko Muruzabalgo sermoiak *iz humildades beteric dauden abec* dakar (Satrustegi 1987: 82-85); eta *pueblo egarriec itozen cegonari* bilduma bereko beste sermoi batean (Satrustegi 1987: 70-73).

### *3.3.1.3.* Bertze*-ren kokaguneaz*

Hurrenkera dela eta, aipagarri da *bertze*-ren kokagunea. Ohi bezala dagokion izenaren ezkerretara dagoen arren, lekukotasun zaharretan beste kokagune bat izaten du maiz, izenaren modifikatzailearen aurretik. Beriainenak dira ondoko adibide hauek:

a) *berce gauza ofreci al daquioquen guciac* 'ofrezi ahal daki(zki)okeen bertze gauza guziak' (17v).
b) *berce christioac duen obligaciosco asco gauzetan* 'kristauak duen obligaziozko bertze gauza askotan' (32r).

c) *berce honlaco gauzaric asco* 'honelako beste gauzarik asko' (54v).
d) *berce mundu onetaco gauzac* 'mundu honetako bertze gauzak' (68v).
e) *berce gende mota onlaco guciac* 'honelako bertze jende mota guziak' (97r-97v).
f) *berce Elizaco oracioac* 'Elizako bertze orazioak' (100r).

Dirudienez, ezaugarri hori zaharra da; esate baterako, mendebaldean Kapanagak badu halakorik: *beste esaten direan gauzaak*. Lapurdiko, Nafarroa Behereko eta Zuberoako testu zaharretan ere ohikoa zen hurrenkera hori:

a) *bertce gaiñeraco lehenbicico partean declaratu gabe utci ditugun gauçac* 'gainerako lehenbiziko partean deklaratu gabe utzi ditugun bertze gauzak' eta *bertce Eliçaco officioac* 'Elizako bertze ofizioak' (Materra).
b) *bertze antikitatian izan diren kapitain handiak* 'Antikitatean izan diren bertze kapitain handiak' (Tartas).
c) *berce arimen cargu dutenec* 'arimen kargu duten bertzeek', *berce harenganic errecibitu ditugun ontassun suerte guciez* 'harenganik errezibitu ditugun bertze ontasun suerte guziez' eta *berce haren obedient eztiren guciac* 'haren obedient ez diren bertze guziak' (1650eko Oltzeko otoitzak).
d) *Ber otoitzça eta beste bere obra seindiac oro* 'ber oroitza eta bere beste obra seindiak oro' (Lopez).

### *3.3.1.4. Posesiboaren kokaguneaz*

Hegoaldeko goi-nafarreraz idatzita dauden Beriainen lanetan *bere* posesiboaren hurrenkera berezia aurkitu dugu. Hurrengo adibideetan ikusten denez, *bere*-ri dagokion ISren aurre-aurrean egon beharrean, ezkerrerago daukagu, erlatibozko perpausaren aurretik:

a) *vere criatu çuen iaunaren contra* 'kreatu zuen bere jaunaren kontra' (39v).
b) *vere criatu çuen iaunari* 'kreatu zuen bere jaunari' (93v-94r).
c) *vere meregitu cizquigun obra eta ondasun guciequi* 'merexitu zizkigun bere obra eta ondasun guzieki' (107v).
d) *eguin baytio agravio bere criatu çuen iaunari* 'egin baitio agrabio kriatu zuen bere jaunari' (154v).

Goi-nafarrerazko testu zaharretan, Berianen baitan bakarrik aurkitu dugu egitura hori, baina ez da bere-berea. Besteak beste, Zuberoako zenbait autorek ere hurrenkera hori dute:[1285]

a) *...ordian ere, Errege miserable hark, galdu eta peritu beharzian, Ienko miserikordiosak ezpalu egorri Profeta Gad hargana, haren mehatxatzera* ***bere*** *egin zian* ***faltaz****, eta ezpalu berriski Errege kriminel hark bere dolu, eta penitentiaren moienez bere bekhatiaren barkhamendia irabazi...* (Tartas).
b) *Ebats zaionari ezagütü bada, edo haren ageri diren* ***züzen düner****, bestela gaizaren bürzagiarentako eman amoinatan, edo harentako* (Belapeire).

[1285] Dorota Krajewskari zor dizkiot honako adibideok; bihoazkio, beraz, eskerrak.

c) *Ezi nur ere gogotik* ***zure*** *ezinago saintü den* ***zerbütxiaren*** *pian jarten beitira, hek ükhenen dizie grazia handi bat* (Maister).

Nafarroan, erronkarieraz ere agertzen da hurrenkera bera: *Ez ta re aficioneric etzei ecun biar deitaco ñori re lurraren gainian ssen Aita, bada, bat solo da* ***ssen*** *ceurian dagon* ***eguiazco*** *Aita* (Hualde Mayo).

### *3.3.1.5.* Asko*-ren kokaguneaz*

Euskarazko testuetan *asko* zenbatzailea izenaren eskuinean zein ezkerrean ager daiteke. *OEH*n (s.v. *asko*) esaten denaren arabera, Iparraldeko idazleek, zehatzago Lapurdi eta Nafarroa Behereko autoreek, izenaren ezkerrean erabiltzen dute; aldiz, Hegoaldeko idazleek, oro har, izenaren ondoren jartzen dute. Nolanahi ere, Lazarragak badu izenaren ezkerrean *asko* duen adibiderik: *asco donzella* (A1: 1159r), *asco çaldun* (A1: 1159v), besteak beste.

Goi-nafarrerari dagokionez, nagusiki *asko* izenaren eskuinean ageri da lehen lekukotasunetarik: *peril asco pasaturic* (Amendux), *Nafarroan gari asco* (IsMan), *aseguin ascorequin*, *urte ascoz*, *gustu asco* (JElGut).

Nafarroako hegoaldeko testuetan, ordea, *asko* zenbatzailea izenaren ezkerrean agertzen da. Beriainen adibideak dira ondoko hauek: *asco gauzetan*, *asco gendec*, *asco maneras*, baina *dificultate eta estorbu asco* ere badago. Lizarraga Elkanokoak *asko mertxede, asko modu* eta *asko neke* ditu.

Dena den, lekukotasunetan erakusten denez, egitura zaharrena [partitiboa + *asko*] da, arkaismo gisa *eskerrik asko* egituran mantentzen den bezala. Lapurdin Axularrek halako andana du, Araban Lazarragaren obran eta dotrinazko sermoitegian (Ulibarri 2015) ere agertzen da. Nafarroaz den bezainbatez, *gauzaric asco*, *desgraciaric asco* dakartza Beriainek, eta beranduago Lizarraga Elkanokoak ere, besteak beste, *kargurik asko* eta *inzensurik asko* dakartza.

### *3.3.1.6. Ezeztapena*

Ezagun denez, euskarazko ezeztapenaren lehen lekukotasunez geroztik, ezeztapenak egungo euskarak ez duen bestelako hurrenkera zaharrago bat ere erakusten du. Horietan *ez* partikula aditz nagusiaren eta laguntzailearen artean dago. Lehen adibide ezaguna Donemiliagako glosetan agertzen da: *ajutu ez dugu*; eta gerora maiz lekukotu da.

Goi-nafarrerako testu zaharrenetan, lehen lekukotasunak agertzerako, hurrenkera berria agertzen da: XVI. mendean *ez omen da joan* (Iruñea, 1596) eta *ezcaiçaçula juci* (AresOtoi) ditugu dagoeneko, eta XVII. mendean ere hauxe agertzen da: *onec estrauco orri gayçic eguiten* (Larrasoaña, 1606), *Jaincoac ez nezan icus* (Sueskun), *eztitçula sobra barrena sarr* (Atarrabia, 1647), *veorraq eztire vere buruz joan* (Baraibar, 1649), *ezpaitugu guc escrivicen* (BeraGut), *nic eztut sujetazen*, *ezaizue faltaco* (JElGut). Beriainek ere egoera berbera islatzen du: *eztu ençunen*, *ezta içanen*, *ezpaycio respondatu*.

Dena den, hurrenkera zaharra mantentzen duten adibide gutxi batzuk badira; guk hiru baino ez ditugu aurkitu: *isanen eztu* (Amendux), *nic icusçi ezaytut* (Intza, 1611)

eta *apartace esta* (El*Dot*). Beraz, ezeztapenaren hurrenkera zaharra goi-nafarreraz aspaldi galdu zela dirudi.

Ezezkoaren hurrenkerari lotua, gaztelaniazko *ni ... ni* egituraren pareko, *ez ... ez* egitura duten zenbait adibideak ditugu: ***ez*** *iaio da,* ***ez*** *iaioco* (HenBer), ***ez*** *iffernua acabatuco da,* ***ez*** *an dagonaren arima ez gorputça eztirade beñere nay luquetelaric illen* (Ber*Dot*). Testu zaharretan, behinik behin, ohikoa da erabilera hori: Etxeparek *Ez galdu da, ez galduren çure gomenducoric* dakar 2. olerkian.

### 3.3.2. 'Xrekin Y' eta 'X Yrekin' egitura kopulatiboak

Euskara zaharraren ezaugarri sintaktiko arkaiko aipagarria da 'Xrekin Y' edo 'X Yrekin' egitura kopulatiboa. Lakarrak (1983: 49-57, 2008) erakutsi zuenez, testuetan askotan agertzen den ezaugarria da.

Azken urteetan egin diren testuen azterketa sakonagoek egitura horren adibide gehiago aurkeztu dituzte. Esate baterako, Padillak (2011: 76-77) erakutsi du, *Kadet eta Betiriño* izenburudun lapurterazko XVIII. mendeko eskuizkribu anonimoan agertzen dela 'Xrekin Y' egitura. Bestalde, Lakarrak (2008) Urthubiagako alabaren balada benetakoa dela erakusten du, bertan egitura kopulatibo zahar hori agertzen delako; eta, gainera, 1983ko saioan ezagutzen ez ziren egitura horren adibide gehiago eman ditu, batez ere Lazarragarenak. Areago, erakutsi du 'Xrekin Y' egituraren ondoan 'X Yrekin' egitura ere badagoela.

Goi-nafarrerara mugatzen bagara, Azkuek ahozko tradiziotik jasotako kantuetan agertzen diren zenbait adibide goi-nafarrerazkotzat eman zituen Lakarrak (1983). Horien artean, Etxalarren ondoko kopla jaso zuen Azkuek (*apud* Lakarra 1983: 55):

> Neure alaba Miarrez
> zer dun orrela nigarrez?
> Ire yauntziak eginik tziauden
> urregorriz eta zilarrez

Bertan egitura kopulatibo zaharra agertzen ez bada ere, Azkuek (*ibid*.) ohar batean dio *urrearekin zilarrez* abestu zuela berriemaleak.

Bestalde, elizondoar emakume bati ondokoa jaso zion Azkuek (*apud* Lakarra 1983: 55-56)*:*

> Juan Martin de Aborreta
> da Erroko semea
> aitaren seme maitea.
> Gizonak eztezala desira
> nik izan dudan suertea:
> galdurikan utzi ditut
> lau aurrekin andrea.
> Neke da erremediatzea!

Baztanen jaso zuen egitura horren beste adibide hau (*apud* Lakarra 1983: 56):

> Ezpondan badire bortz emazte
> iru zagar eta bi gazte;
> aza landatzen pasatu dituzte
> aste batekin bortz ilebete.

Horiezaz landara, Satrustegik (1971) ezagutzera eman zituen Urteberri egunean Sakanako zenbait herritan abesten diren bertso batzuk. Bertan *graziarequin osasuna* eta *paquearequin ontasuna* perpaus kopulatiboak ditugu.

Orain arte ikusitako adibide horiek guztiak ahozko tradiziotik hartuak dira; baina, dakigula, ez du oraino inork testu zaharretako adibiderik eman. Hala ere, aurkitu ditugu egitura kopulatibo zahar horren adibideak testu zahar nafarretan, baina ez dira asko.

1750 aurreko testuetan oso bakan idoro daiteke egitura kopulatibo zahar hori; hain zuzen ere, bi testu zaharretan besterik ez zaigu azaldu. 1693an Joseph Elizaldek idatzitako gutunean dago adibide zaharrena: *zu senarrarequin Jaungoicoac urte ascoz conserba zaitezatela* 'zu eta senarra Jaungoikoak urte askoz kontserba zaitzatela'.

Mende erdi beranduago, 1743 inguruan idatzi ziren Obanosko bertsoetan beste adibide hau dugu: *lurrarequiñ cerua bere contra tu exaiac, juramentu eguilleac* 'lurra eta zerua bere kontra ditu etsaiak, juramentu egileak'.

1750 ondoko testuetan ez dugu sakon begiratu saio honen helburuetatik kanpo dagoelako, baina 1753ko Goizuetako sermoian (Reguero 2015b) bi aldiz aurkitu dugu egitura arkaikoa:

a) *Yl da recebituric buruan aranzazco coroa, beguietan istuac, bearrietan afrentac, agoan* beazumarequin vinagrea, *matralletan bofetadac, bizarrean tiracac, lepoan*.
b) *Nigan ongui descubritcen cen zure consejua, zure clemencia,* gurasoarequin humearequico *amorioa.*

Ondarrak (1989) ezagutzera emandako Bertitzaranako XIX. mende hasierako dotrinan ere bada alerik. Bertakoa da *purgatorioco animen favoretan* Pater nosterrequin Ave Maria esaldia.

Halako egitura toponimian aurkitzea ohikoa ez bada ere, Ultzamako toponimian, 1554an honela agertzen da: «...en lo fazero...pusieron las estacas una en la parte llamada garayco larrearequin goyco berroen vitartea»; hau da, 'Garaiko larrearen eta goiko berroen bitartea' deritzan lekua.[1286] Horrekin batera, Jimeno Juríok (2010) emandako toponimoetarik bat dan Astraingo *Euntze errekareki bitartea* 'Euntze eta errekaren bitartea' 1683an lekukotua.

### 3.3.3. Objektu zuzena genitiboan

Goi-nafarrerak dituen ezaugarri gordeen artean dago perpaus jokatugabeetako objektu zuzenak genitiboan ematea. Antzina, orokorra bide zen euskara zaharrean, eta horren adibideak topa litezke mendebalde zabaleko hizkeretan (ik. Lakarra 1983: 58; 1996: 191).

Esan bezala, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean ohikoa da egitura hori; eta nonahi aurki daiteke. Hemen adibide batzuk: *ola baten es galceagatic* (Lesaka, 1549), *oin-escuen apazcera* (HenBer), *vicien eta illen iusgacera* (AresOtoi), *gueçur andien erratera* (ArreKopl), *vicien eta hilen jusgacera* (Zannetti), *gari onen beregitçean* (ElOl), *Urtubiaco drechoaren pagatceco*, *onen bidalçera* (BeraGut), *bere servicean eta nere amaren*

---

[1286] Patxi Salaberri Zaratiegik eman digu esaldi honen berri eta Larraintzar - Lizaso, 1554, NAO, M. Perez de Cenoz, Atarrabiako protokoloak, 1, 139 prozesuan dago.

*onrrazean*; *zure serviceco* (ElizalGut), *demonio baten egozten* (Serm1743-1), *vicien eta illen juzgaçera*; *herien visitatçea* (Ber*Dot*), *il ce gure salvaceco* baina jarraian *becatutic gu atraceco*; *ilen eta vicien juzgazera* (El*Dot*).

Egitura hau goi-nafarrera zaharraren eremu osoan lekukotzen zaigu, baina testu guztietan ez da sistematikoa. Beriainek, esaterako, ez du beti genitiboa erabiltzen:

a) *Eta joan bear dut desseorequi iaun au adoraceco* (Ber*Meza* 27r).
b) *Nola seme bat içan eta hura ofrecicea aren divina magestadeari* (Ber*Meza* 58r).
c) *gauzac salvaceco* (Ber*Dot* 101r).
d) *gauza ohec jaquitera* (Ber*Dot* 100r).

Hurrengo mendean ere, 1743ko bigarren sermoikoak dira hauek:

a) *Obrac deseguitera.*
b) *Etorri zen gu demonioaren esclabitudetic liberaçera.*
c) *Zegoan Jesus demonioaren egozte.*
d) *Demonio onen egozten*.
e) *Abisoen ematen*.

Hala eta guztiz ere, sermoi horretan ez da sistematikoa: *Destruicera vizioac eta ezarzcera virtuteac*.

Sanzberro etxalartarrak 1749an idatzitako dotrinan *il cen gure salbaceco* eta *vicien eta ilen iuscacera* datoz, baina *culpatic gu ateraceco* ere badago.

### 3.3.4. Linschmann-Aresti legea

Euskarazko testu zaharretan, «genitibo bihurkaria erabiltzen da izenordain horrek aipatzen duen pertsona perpaus berean baldin badago, perpauseko aditzaren argumentu gisa —NOR, NORI edo NORK argumentua bada, alegia—. Aldiz, izenordain arruntera jotzen da aipatzen den pertsonak perpausean ez badu argumentu erreferentzialik» (Mounole & Gómez 2018: 522; cf. Sarasola 1980; Trask 1997: 239-240; Martínez Areta 2015).

Sarasolak (1980: 438) erakutsi zuenez, goi-nafarrerazko ezkontza fedeek, 1609ko olerki sarituek, Beriainen eta Elizalderen testuek ongi betetzen dute legea lehen eta bigarren pertsonekin. Dena den, salbuespen gisa ematen du Beriainen *Iesu Kristo gure Iauna* esaldi aldagaitza. Dirudienez, forma fosildutzat du Beriainek egitura hori, eta aditzagatik hala badagokio ere, ez du indartua erabiltzen. Jarraian daude topatu ditugun bi adibide:

a) *Ala arrazio gueyago da gu gauden erreverencia eta devociorequi Iesu Christo gure iaunaren aurrean* (30r).
b) *Alas eta an ofrecicen diogunean eta presentacen munduaren salvaçallea Christo gure iauna* (30r).

Halaber, Salaberrik (1994a) Elizalderen obran aurkitutako bi salbuespenen berri ere ematen du:

a) *Gure etsayetatic libera gaitzazu, gure Jaun eta Jangoycoa*.
b) *Jauna da zeurequi*.

Oro har, Sarasolak baieztatu bezala, oro har, Linschmann-Aresti legea betetzen da ezkontza fedeetan; ik., adibidez, *ematen drauçu**t** çuri Diego **neure** fedea ene senarçat eta ez verce senarric eguitecoz* (EzkonZufia). Halarik ere, salbuespenik bada. Beorburuko ezkontza fedean *ematen derauçu**t** **neure** fedea* adibidean legea betetzen da, baina *Martin, ematen derauçut ene fedea* adibidean ez da hala gertatzen, indartua esperoko genukeen lekuan arrunta agertzen baita. Espartzako ezkontza fedean ere ez da beti indartua erabiltzen: batetik, *Maria, arcen du**çu** Joanis ori **çeure** çenarçat?* dugu, baina, bestetik, *çuc, Maria, arçen du**çu** Joan ori **çure** çenarçat*; *Joanes, çuc arçen du**çu** Mari ori **çure** emazteçat* agertzen dira.

XVI, XVII eta XVIII. mendeetako gainerako lekukotasunetan legea betetzen da:

a) *ayta **heurea** nor du**an** eztaquic* eta *çu e**ç**ara **çeure** aytaren alava* (Arribe 1564).
b) *eduqui nahi ditu**c** **heure** hiçac* (Eugi, 1565).
c) ***ene** anayari **bere** asentutic lequ egui**oçu*** (Ezkurra, 1569).
d) ***heure** bician estu**c** trataçen falçuquerietan bayce* (Puiu, 1596).
e) ***çeure** andre galanta ori ongui besarqueça**çu*** (Imarkoain, 1600).
f) *us**da**çu **neure** baquean*; *ni **neure** atarian **nago*** (Altsasu/Burunda, c. 1648).
g) *Barca jazqui**guçu** **guere** peccatuac, guc guere contra eguiten dizquigueney barcaçen diezcun* (AresOtoi).
h) *Arla conforma gaizala **bere** amistanzan eta **geure** ermandadean; **Neure** obligacioarequin cumpliceco, asi gogo **dut** egun jaietaco ebangelioen esplicacen* (Serm1729).

### 3.3.5. Komunztadura gaiak

Euskararen sintaxiaren ezaugarrietako bat da absolutibo, ergatibo eta datibo argumentuek, baita alokutiboak ere, aditzarekin komunztadura egitea. Dena dela, euskararen historian ez da beharrezko izan beti komunztadura, ez behintzat hizkera batzuetan.

Goi-nafarrerari dagokionez, lehen lekukotasunetarik aurki daitezke datibo komunztadura ezaren aztarnak: *eçuen scribatu bear berçeri* dugu Juan Irañetak idatzitako gutunean. XVII. mendean ere bada adibiderik:

a) *Guiçoná**ri** ematen **dá** eta génde guzti**éy** óngui **eguíçu*** (EzkOl).
b) *Onetaco escacen **duela** Virgina Andre Dona Maria**ri** eta iaun done Miquel ayngueru**ari** eta sandu guc**iey** eta sacerdote**ari** otoytz eguin dezaten Iaungoycoaren aurrean* (Ber*Meza* 40r).
c) *Nola egon vear baytute Iaungoyco**ari** escatu bear **dutenac** ayn ondasun andiac* (Ber*Meza* 43v).
d) *Otoytz eguin bear **du** Iaungoycoa**ri*** (Ber*Meza* 67v).
e) *Nic ez**tut** sujetazen nio**ri** borondatea* (JElGut).

Hurrengo mendean ere bada laginik:

a) *Confessacen **naiz** Jangoyco omnipotente**ari*** (El*Dot* 18).
b) *Eguin bear **dugu** oracio ainguiru**ei** eta sandu**ey**?* (El*Dot* 46).
c) *Oracio ebec **estitugu** eyten Jangoyc**oari** eta bere ama**ri**?* (El*Dot* 48).
d) *Baña sanduen medios escazen **da** Jangoico**ari*** (El*Dot* 48).

Komenigarri litzateke adibideak banan bana begiratzea eta ditrantsitiboak eta iragangaitzak bereizirik begiratzea, ez baitute berdin jokatzen. Edonola ere, 1750 aurreko goi-nafarrerazko lagina txikiegia bide da ondorio handirik ateratzeko.

Datibo komunztaduraz gain, kopuru aldetik gutxiago izan arren, absolutibo pluraleko komuztadura falta ere agertzen da testu batzuetan; ez, nolanahi ere, sistematikoki:

a) *Bere becatuac dela medio* (Serm1743-1).
b) *Ezpadu charidadea eta obra onac (*El*Dot* 28*).*

### 3.3.6. Nominalizazioa

Euskaraz zenbait aditzek osagarritzat aditz-izena hartu ohi dute; hala ere, osagarri horrek hartzen duen kasu marka edo postposizioa ez da berdina euskalki guztietan.

Nafarroako eta Iparraldeko dialektoetan, adlatiboan ematen da aditz zenbaitek eskatzen duten osagarria. Aldiz, mendebaldeko eta erdialdeko hizkeretan osagarria inesiboan eman ohi da. Adibide gisa, Caminok (2013b: 87) 1782ak Lopezek itzulitako Alfonso Rodriguezen liburuan agertzen diren aditzak zerrendatzen ditu, eta adlatiboa duten hamahiru aditz zerrendatzen ditu.

Goi-nafarrerazko testu zaharretan, batez ere, adlatiboa erabiltzen da aditzen osagarri diren aditz-izenekin; eta gure lekukotasunetan, gutxienez, honako aditz hauekin hala erabiltzen dela ikusi dugu: *ahalke izan*, *agindu*, *atrebitu*, *eman*, *erakutsi*, *komeni izan* eta *utzi* aditzekin:

a) *Ezcaytzaçula utzi tentacioan erortera* (Ber*Meza* 93r).
b) *Conveni zayo egostera* (Ber*Meza* 44r).
c) *Alque duenac eguitera nic neure evangelioan manacen dudana* (Ber*Meza* 55r).
d) *Atrevituco onla egotera mundu onetaco erreguen aurrean* (Ber*Meza* 28v).
e) *Ezpallitezque atrevi ala egotera* (Ber*Meza* 31v).
f) *Jatera ematea* (89v); *edatera ematea* (90r) (Ber*Dot*).
g) *Cargatucera aguinduco tuzu* (BeraGut).
h) *Eracusi comfesazera eta Jaungoicoa comunioan arzera maiz* (ElizalGut).
i) *Jatera ematea gose denari*, *edatera ematea egarri denari* (El*Dot* 12).
j) *Gorpuçean sarçera uzten dionean* (Serm1743-1).

Eman ditugun adibideak lau lekukotasunetatik hartuak dira, baina Nafarroaren eremu handia hartzen dute; hala da gutxienez: Bortzirietan, Gesalatzen, Utergan eta Nafarroako erdigunean. Hala ere, Nafarroako ipar-mendealdean, Gipuzkoarekiko mugan, bi egituren arteko lehia dagoela dirudi. Hain zuzen ere, Aresoko otoitz zaharretan bi egiturak agertzen dira: *ezcaiçaçula juci erorçen* (AresOtoi), baina *iutci te[ntaci]oan erortera* (AresOtoi).

### 3.3.7. Mendeko perpausak

Jarraian mendeko perpausekin erlazionaturiko zenbait ezaugarri ikusiko ditugu. Horrela, baldintzazko perpausak (§ 3.3.7.1), konparaziozkoak (§ 3.3.7.2),

aurkaritzakoak (§ 3.3.7.3), helburuzkoak (§ 3.3.7.4), moduzko eta denborazkoak (§ 3.3.7.5), kausazkoak (§ 3.3.7.6) eta *eze* partikula duten mendekoak (§ 3.3.7.7) aztertuko ditugu.

### *3.3.7.1. Baldintzazko perpausak*

Euskaraz idatzitako testu zaharrenetan, perifrasi zaharraren aztarna agertzen da baldintzazko perpausetan. Izan ere, protasian **edin*, **ezan* eta **erazan* daude kasu askotan. Aurkitu dugun lehendabiziko adibidea 1552koa da: *valdin jo baneça aren senar içateco* (EzkonZufia).

XVII eta XVIII. mendeetan Beriainek eta Elizaldek badituzte egitura zaharraren adibideak:

a) *Guen badeçagu* (27v); *Eztaquienac erran bales* (91r); *Eracusi ezpadrazote* (125v); *Hau eguin badedi bear den bezala* (126v) (Ber*Meza*).
b) *Jaquin ezpadezagu* (100r); *Lagun ezpalequio* (102v); *Ill badadi* (125r); *Eguin badeçaçu* (126v); *Husa ezpadidi* (153r); *Aurquen badedi* (153v) (Ber*Dot*).
c) *Jan baleza* (74), *edan baleza* (74); *eraman baliz* 'eraman balitza' (75) (El*Dot*).

Dena den, **edun* edo *izan* duten protasirik ere bada; Beriainenak dira ondokoak: *gauza bat eguinen badu, Baldin nay badugu*, *necessario içandu baliz*, *Baldin haurquendu baguina* (Ber*Meza*).

### *3.3.7.2. Konparaziozko perpausak*

Konparaziozko perpausak egiteko, [… *baño…ago*] egitura orokorraz gain, *ezez* & *ezes* partikula daraman egitura ere lekukotzen da goi-nafarreraz. Halere, bi tokitan baino ez dugu ediren. Berianek askotan darabil egitura hau, eta Amaiurko 1659ko esaldian ere agertu da. Hauek dira adibideak:

a) *Eta ez solamente agradacen çayo sacrificio au, gueyago eces berce gauza ofreci al daquioquen guciac, bay eta ecin agradatu zayo beyn ere, eta ecin agrada daquioque gauzaric, baterere baycic sacrificio onen medios* (Ber*Meza* 17v).
b) *Eta gueyago agradacen çayona eces berce gauça guciac* (Ber*Meza* 18v).
c) *Ceñec gueyago honra ematen baytio eces berce gauça guciec* (Ber*Meza* 18v).
d) *Sacrificioa dela aventajatuago eta obeago, eta gueyago agradacen çayona comparacioric bague, eces berce sacrificio guciac* (Ber*Meza* 16v).
e) *Gueyago conveni çayzquigunac, ecez mundu onetaco gauza gucia* (Ber*Meza* 29v).
f) *Garade gu pobreago, ecez munduan gueyen diradenac, baytirade poderoso* (Ber*Meza* 29v).
g) *Jaincoaren passioa! Uçac, anaya, oray ere geyago dituc oronac eces egunac* (Amaiur, 1659).

Dirudienez, antzina egitura hori orokorragoa zen; Lazarragak berak baditu halakoak: *Esan ce eguidaçu berva oriec, cegayti gurago dot Silverori on derechadala il, ece eç a ancitu ta bici içan* (AL 1152v); ik., bestalde, *OEH* s.v. *eze*.

#### *3.3.7.3. Aurkaritza*

Aurkaritzako mendeko perpausak osatzeko, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean *baizik* lokailua da nagusi:

a) *Nic, alafede, emayten diçut ez verçe senarric ez eguiteco çu baycic* (EzkonZufia).
b) *Eztela joan bear mezara gogo gayces, eta ecin gueyagos becela, baicic borondate ones eta gogotic* (Ber*Meza* 19r).
c) *Esta berce arracioric, cer bilatu baicic* (Serm1729).
d) *Eta ezcaizazula utzi tentacioan erorzera, baicic libera gaizazu gaicetic* (El*Dot* 5).

Dena den, noiztenka beste aldaera batzuk agertzen dira. Behin *baicica* agertzen da 1729ko sermoian: *Eta ez solo pobre, baicica erorcen da berce bigarren maldicioan* (Serm1729). Bestalde, *vaycen* dago Utergako ezkontza fedean: *prometaçen dinat ez verçe emazteric eguiteco i vaycen vici nayçen artean* (EzkonUterg). Aldiz, Zufiko ezkontza fedean *baycic* eta *bayce* aldaerak daude. Zaraitzu aldean, Otsagabiko 1598ko lekukotasunean *bayçi* eta *baycic* agertzen dira.

#### *3.3.7.4. Helburuzkoetan* -gatik

Goi-nafarreraz agertzen den helburuzko perpaus motetarik bat da mendeko esaldian subjuntiboko aditzari *-gatik* eranstea. Dena dela, ditugun adibideak oso urriak dira, eta bi lekukotasunetan aurkitu ditugu. 1609ko Elizalderen olerki saritukoak dira ondoko adibideak:

a) *Eta vici gaytengatic / dabil beti gure atçean.*
b) *Trabaja etzquindeçengatic / gari onen beregitçean.*
c) *Eta eros draçogungatic, / pregonatçen du onlatan.*
d) *Assarra ezquindeçengatic, ogui au erreparticean bati ambat ematen dió, millari nola millatan.*

Adibide horiezaz landara, 1735an Frantzisko Elizaldek idatzitako dotrinan ere ageri da, behin bada ere, egitura hori:

> *Gal. Cergatic eracusi zigu deycera «Aita»?*
> *Err. Guc esca dezogungatic semearen amorearequin* (42).

#### *3.3.7.5. Moduzko eta denborazko perpausetako* -elarik

Mendeko perpausekin jarraituz, interesgarri da denborazko eta moduzkoei begiratzea. Ekialde zabaleko mintzoetan, *-elarik* erabiltzen da gisa horietako perpausak sortzeko. Hala ere, testu zahar nafarretan *-elarik* atzizkia lekukotasun gutxi batzuetan bakarrik ageri da. Zehatz esateko, Beriainen obretan, 1729ko sermoian, 1743ko bi sermoietan eta Obanosko bertsoetan bakarrik lekukotzen da. Gainera, horietan maiz ez da erraza denborazkoa ala moduzkoa den bereizten. Hona hemen lagin bat:

a) *Nola sartu cenean Simonen echean, zegolaric aren amaguiarrava minequi, sendatu çuen* (Ber*Meza* 89r).
b) *Len ducien costumbrera delaic ona* (Serm1729).

c) *Nai zuelaric paçientissimo Jobec entendiçera eman* (Serm1743-1).
d) *San Pauloc escribiçen çielaric Ebreoei* (Serm1743-1).
e) *Añadizen dituzularic culpac culpen gañean eta becatuec becatuen gañean* (Serm1743-2).

Testu berrixeagoetan, Orrioko 1750eko eliza-aginduan eta Baztangoetan ere erabiltzen da *-elarik*.

Bestalde, [*nola … bait…*] egituradun moduzko perpausak ere erabiltzen ditu Beriainek:

a) *Nola baytio Concilio Tridentinoac* (9r).
b) *Nola gauza ohec gucioc baytauzqui aren divina magestadeac* (16r).
c) *Nola egonen bayllizate adicen balu* (91r).

Itxura denez, kontzesibo moduan ere erabil daiteke *-elarik*: *Ez an dagonaren arima ez gorputça eztirade beñere nay luquetelaric illen* (Ber*Dot*).

### *3.3.7.6. Kausazko perpausak*

Kausazko esaldiak sortzeko baliabideetarik da mendeko perpausean *zergatik* edo *zeren* eranstea. Dena den, gisa horretako egituretan, aditz laguntzaileak hartu ohi duen morfema ez da beti berdina izaten; *bait-* edo *-(e)n* izan dezakete aditz laguntzaileek, baina hutsik ere gera daitezke.

Goi-nafarrerari dagokionez, hiruretariko formak ditugu:

a) *Cegatic ilundu den* (FelBer).
b) *Çaute apurcho bat bigueletara, ceren onec bey au jonai dic* (Eugi, 1566).
c) *Egon bear dugu atenciorequi eta erreverenciarequi, cerengatic mezan baycaude* (Ber*Meza*).
d) *Eta barca diazadazu escrivizeco modo gaitzaz, bañon escussatuba naiz ceren ezpaitugu guc escrivicen ussatzen uscaraz* (BeraGut).
e) *Bienaventuratuac dire espiritu pobre duten ayec, cergatic ayena da cerua* (El*Dot* 16).
f) *Cergatic zaren Jangoycoa eta cergatic onesicen zaitudan gauza gucien gañetic, damu dut neure bioz gucias orren ofendituas* (El*Dot* 19).
g) *Irurgarren privilegioa da apostolo gucietaric lembissicoa izan ce zerura joan cena, cerengatic lenago pasatu baizue martirioa* (Serm1729).
h) *Eta dio lenagoco gure antepasatuac gauza gucies ceude abundante, cerengatic amarrenac eguiten citusten ongui* (Serm1729).

Egitura horretan goi-nafarreraz dugun txandaketak ez dirudi azpidialektoak banatzeko balio duenik.

Bestalde, behin bada ere *ezen* erabiltzen da Aizkoako 1567ko esaldian kausazko perpausa egiteko: *vada aseguin arr eçan eçen ni bengatuco nayçan*.

### *3.3.7.7. Mendeko perpausetako* eze *partikularen erabilera*

Zenbait testu nafarretan, mendeko perpausetan *eze* partikula agertzen da; ez beti esanahi berarekin. Ondoko adibideetan ikus dezakegunez, ohikoa da konpletiboetan

agertzea perpaus nagusiaren ondoren. Beriainen obretan, gisa horretako perpausak osatzeko *eze* partikula ageri da beti ez bada, gehienetan:

a) *Gauza ciertoa da ece gauza bat eguinen badu persona batec ongui bear duela jaquin cer gauza den, eta nola bear duen eguin* (Ber*Meza* 6v).
b) *Nondic dator erratera S. Ioan Chrisostomo ece mezan daucagula orzeguneco may gucis abarasa hura* (Ber*Meza* 8r).
c) *Emendic da ece mezan ofrecicen den sacrificioa dela aventajatuago* (Ber*Meza* 16r).
d) *Alaver, atracen da ece Iesu Christori agradacen çayola gueyago meza* (Ber*Meza* 18v).

Dena den, konpletibozkoak ez diren perpausetan ere erabiltzen da partikula hori. Beriainen obretan bertan, ondorio perpausen ondoko adibide hauek ditugu:

a) *Alaco maneras ece itzac consagraciocoac erranes guero ezpayta an oguiric eta ardoric baterere* (Ber*Meza* 7v).
b) *Eta ala da ece oray mezan ofrecicen çayonean, ayta eternoari agradacen çayo ambat nola orduan* (Ber*Meza* 17v).
c) *Eta ala pensatu bear dugu, nola ala bayta, ece baldin mezan badaude eun persona edo gutiago edo gueyago, daudela gurequi ambat ayngueru beguiracen gaytuztenac* (Ber*Meza* 31r).
d) *Alaco maneras ece nic pensa dezadan Iesu Christoc nay duen gaucetan* (Ber*Meza* 59v).

Kausazko perpausetan ere bada:

a) *Bada, Iauna, paga çaytez Iesu Christoren meregimentuetan, ece da caudale eta hazienda ene becatu eta mundu gucico becatuengatic çor çaradenen pagaceco* (Ber*Meza* 75r).
b) *Conformacen naycela, ece ene heriotzeco horduan ezpaytuque deuserere ni cerzas acusatu* (Ber*Meza* 89r).

Beriainen obretan ez ezik, *ezi* aldaera Urdozko aferako lekukotasunetan ere agertzen da. Bertan kausazko perpausa egiteko erabiltzen da: *Çaute ijilic eci escu libertatuendaco Jangoicoac badauzqui castigoac*.

1729ko sermoian ere *ezi* agertzen da kausazko perpausetan:

a) *Discurricen zue ama garrec nola icussi bere semeac acomodaturic mundu gontaco honrraric andienetan, eci esta oraicoa amac ero izate beren humen combeniencia eta honrraetan.*
b) *Au guciau conformatus len ducien costumbrera delaic ona eta ongui introducitua, eci gaistoas esta casoric eguin vear.*
c) *Eta dio Christoc naiago luquela sartu zaldis beteric dagon estrabi batean an oincazca dezaten, eci ongui amarrenac eguiten estituenaren agoan.*

### 3.3.8. Ondorio zenbait

Dialektologiako ohiko lanetan, sintaxiari eman izan zaio pisu gutxien (Mitxelena 1976a: 210; Camino 2009: 379). Ezin uka liteke, dena den, euskararen sintaxiak izan duen bilakabidea ulertze aldera, dialektoek nola jokatu duten aztertzea nahitaezkoa dela.

Saio honetan aztertu ditugun ezaugarri sintaktikoak ugari izan dira orotara, eta merezi luke azpimarratzea bakar bat ere ez dela goi-nafarrerak egindako berrikuntza esklusiboa. Berrikuntzatzat har liteke, beharbada, modu eta denborazko perpausetako *-elarik* atzizkia erabiltzea, baina hori Nafarroatik kanpo ezaguna da Iparraldeko testu zaharretan ere. Galerei dagokienez, euskarak izan duen joera irudikatzen dute goi-nafarrerako testu arkaiko eta zaharrek, hitzen hurrenkerarekin edo 'Xrekin Y' egiturarekin ikusi dugunez, besteak beste.

Hortaz, irudi luke, euskararen bilakabidea zein izan den ulertzeko lagungarri bada ere, gertatu diren aldaketa sintaktikoek ez digutela dialektologiarako askorik balio.

## 3.4. LEXIKOA

Hizkuntzaren azterketarekin amaitzeko, lexikoa izango da ondoko atal honen ardatza. Bitan banaturik dakargu saioa: lehen azpiatalean hiztegia osatu dugu aztertu ditugun testuetan agertzen diren hitz esanguratsuenekin (§ 3.4.1); aldiz, bigarren azpiatalean hiztegian dauden zenbait hitz iruzkindu ditugu (§ 3.4.2).

### 3.4.1. Hiztegia

Jarraian dakargun hiztegiak dialektologikoa izan nahi du; dena dela, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean agertzen diren hitz guztiak kontuan hartu beharrean, dialektologikoki edo geografikoki interesgarri iruditu zaizkigunak sartu ditugu hiztegian.

Hartara, euskarazko hitz orokorrak ez ditugu sartu, eta sartu baditugu goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean horien aldaerarik ere agertzen delako sartu dugu; beraz, *aho* sartu dugu, *ago* ere badelako; *etxe* sartu dugu *itxe* ere badelako. Hiztegian hitzen aldaerak ere jaso ditugu. Bakoitzak bere sarrera du; beraz, *aingeru* eta *aingiru* hitzek sarrera bana izango dute.

Ohi bezala, lemak grafia gaurkotuan eman ditugu, Euskara Batuaren arabera, alfabetikoki. Hori dela eta, lekukotasunetan <h> agertzen ez bada ere, hiztegiko lemak <h> izango du. Orobat gertatzen da txistukariekin. Maiz afrikatuak markatzen ez badira ere, leman afrikatuarekin eman dugu hala badagokio; beraz, *as* hitza aurkitu nahi duenak *hats* sarrerara jo beharko du. Era berean, aditzak partizipioan eman ditugu eta, testuetan forma hori lekukotzen ez bada, kortxete artean eman dugu. Alegia, **handitu** eta **ahalketu** ditugu *anditu* eta *alquetuco* ditugulako, baina **[apatu],** *apazcera* eta *apacen* bakarrik lekukotzen direlako.

Sarreraren egiturari dagokionez, lehenik eta behin lemaren kategoria gramatikala adierazi dugu eta, ondoren, ohikoak ez diren hitzen ondoan sinonimo edo azalpena eman dugu, horretarako *OEH* eta *Euskal Hiztegia* baliatuz. Sarrera bakoitzaren barruan hitz horren lekukotutako forma guztiak eta iturriak adierazi ditugu. Hitz batek bi adiera baditu, lema beraren azpian sartu ditugu eta zenbakiekin bereizi. Hortara, *ahalke* 'lotsa' eta 'lotsagabe', biak daude sarrera berean. Bestalde, hitz homografoak sarrera banatan eman ditugu; hartara, adibidez, *eri* hitzak bi sarrera ditu, aurretik zenbakia duela, 'gaixo' eta 'hatz' adierak bereizteko. Hiztegia osatzeko erabili dugun corpusari dagokionez, § 2. atalean eman ditugun testuak oro eta Eranskineko § 1. atalean (E § 1) agertzen direnak erabili ditugu.

## A

**abarats** *adj.* Aberatsa.
*abarasa*, *abaraz*, *abaratsa*, *abaratzic* (§ 2.4.1.1).
Ik. **abrats**.
**abrastasun** *iz.*
*abrastasun* (§ 2.4.2).
**abrastu** *ad.*
*abrastuco*, *abrastea, abrastu* (§ 2.3.8), *abrasteco* (§ 2.4.2).
**abrats** *ad.* Aberatsa.
*abrax* (§ 2.3.8).
Ik. **abarats**.
**abari** *iz.* Afaria.
*abari* (§ 2.2.1).
**abegende** *iz.* Hegaztia.
*abeguendes* (§ 2.3.8).
**adaburu** *adj.* Adarrak dituen pertsona.
*adaburu* (E § 1).
Ik. **adartzu**.
**adarna** *iz.* Inausketa (?).
*adarnara* (§ 2.2.8.25).
**adartzu** *adj.* Adarrak dituen pertsona.
*adarçu* (E § 1).
Ik. **adaburu**.
**ago** *iz.* Ahoa.
*agotic* (§ 2.2.14.3, § 2.3.8, § 2.4.1.1), *agoa* (§ 2.2.19.3), *ago* (§ 2.2.20), *agoco*, *agoz* (§ 2.3.8), *agoan* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *agoas* (§ 2.4.1.1).
Ik. **ahobeko**.
**agotz** *iz.* Lastoa.
*agoz* (§ 2.3.8).
**ahakar** *iz.* Ahakarra, errieta.
*acarric* (§ 2.4.1.2).
**ahalke**
1. *iz.* Lotsa.
*Alqueric*, *alqueric* (§ 2.2.8.21), *alque* (§ 2.3.10, § 2.4.1.1), *alques* (§ 2.3.10, § 2.4.1.2), *alquea* (§ 2.3.10).
2. *adj.* Lotsagabea.
*halquea*, *alquea* (§ 2.2.8.21).
**ahalkegabe** *adj.*
*aalquegabeoc* (§ 2.2.8.3).
**ahalketu** *ad.*
*alquetuco* (§ 2.4.1.1).
**ahamen** *iz.* Mokadua.
*ámen*, *amená* (§ 2.2.14.1).
**ahobeko** *iz.* Bizarra.
*aubecotic* (§ 2.2.8.5), *aubeco* (§ 2.2.8.21).
Ik. **ago**.
**ai** *iz.* Kexua.
*ayes* (§ 2.3.10, § 2.4.2).
**aiher izan** *ad.*
*ayer baçayzquit* (§ 2.2.8.20).
**aiherrik egon** *ad.* Irrikan egon.
*ayerric nagoc* (§ 2.2.8.10).
**ailegatu** *ad.*
*allegatu* (§ 2.3.9.3).
Ik. **eilegatu.**
**ailtzin** *iz.* Aitzin.
*aylcina* (§ 2.4.1.2), *ailcinean* (§ 2.4.2).
Ik. **aitzin** eta **altzin**.
**aingeru** *iz.*
*ainguerу* (§ 2.3.9.3, § 2.4.1.1) *aingueruac* (§ 2.3.9.3), *ayngueruequi*, *ayngueruec* (§ 2.4.1.1), *ayngueruari*, *ayngueru*, *ayngueruey*, *ayngueruac*, *ayngueruen* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *ayngueruec*, *ayngueruequi* (§ 2.4.1.2).
Ik. **aingiru**.
**aingiru** *iz.*
*ainguiru* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *aynguiruec, aynguiruey*, *aynguiruac*, *aynguiruetan* (§ 2.4.1.1), *ainguiruari*, *ainguiruec*, *ainguiruei*, *ainguiruac* (§ 2.4.2).
Ik. **aingeru**.
**airtzul** *iz.* Aitzurra.
*airçul* (§ 2.3.7).
**aitor** *iz.* Lekukoa, testigua.
*aytorrey* (§ 2.2.8.21), *aytor* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2).
**aitzin** *iz.*
*aytzina* (§ 2.4.1.1).
Ik. **ailtzin** eta **altzin**.

**alaroza** *iz.* Neska ezkon berria.
*alaroçaçat* (§ 2.2.7.4).
**aldi** *iz.* Bizitako denbora.
*bere aldias* (§ 2.2.12).
**alfer** *adj.*
*alferric* (§ 2.2.19.3).
Ik. **aufer**.
**alokairu** *iz.* Lansaria.
*alocayruan* (§ 2.2.14.3).
**alonbra** *iz.* Alfonbra.
*alonbra* (§ 2.2.8.30).
**altza** *iz.* Usta txikia.
*alça* (E § 1).
**altzin** *iz.* Aitzin.
*alcina*, *alcineraco* (§ 2.3.8).
ik. **aitzin** eta **ailtzin**.
**anaia** *iz.*
*anayari* (§ 2.2.8.2), *anaia* (§ 2.3.5), *anayac* (§ 2.4.1.2), *anaya* (§ 2.4.2).
Ik. **anaie**.
**anaie** *iz.*
*anaie* (§ 2.2.3), *anayec*, *anaye* (§ 2.4.1.1).
Ik. **anaia**.
**anitz** *zenbt. zehaztgb.*
*anis* (§ 2.2.8.23), *aniz* (§ 2.2.21, § 2.3.5, (§ 2.3.8, § 2.3.9.1, § 2.3.10, § 2.4.1.1, § 2.4.2), *anitz* (§ 2.3.10), *aniçetan* (§ 2.2.16), *anizequin*, *anizetan*, *anizetaco* (§ 2.3.5), *anicec* (§ 2.3.8), *aniçes*, *aniçec*, *anizes*, *anizen* (§ 2.3.9.1), *anizec* (§ 2.3.9.3), *anizetatic* (§ 2.4.1.2).
Ik. **aunitz**.
**antzare** *iz.*
*ançareac* (§ 2.2.6), *ançare*, (§ 2.2.8.20).
**[apatu]** *ad.* Musu eman.
*apazcera* (§ 2.2.10), *apacen* (§ 2.4.1.1).
**apez** *iz.*
*apaeça* (§ 2.2.8.8), *apez* (§ 2.2.8.21, § 2.3.5, § 2.4.1.1, E § 1), *apeçari* (§ 2.2.8.28.1), *apezen* (§ 2.3.8), *apezec* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1), *apezendaco* (§ 2.4.2), *apezac*, *apecic* (§ 2.4.2), *apezaren* (E § 1).
**apeztegi** *iz.*
*apezteguico*, *apeztegui* (§ 2.2.8.24).
**apo** *iz.*
*apo* (E § 1).
Ik. **zapo**.
**ardanbote** *adj.*
*ardanvote* (§ 2.2.8.21).
**ardanbusti** *iz.*
*ardanbusti* (§ 2.2.2).
**ardanzopa** *adj.*
*ardançopa* (§ 2.2.8.21).
**aretze** *iz.* Zekorra.
*areçe*, *areze* (§ 2.2.13).
**argizagi** *iz.* Kandela.
*arguiçagui* (§ 2.2.2), *arguiçaguiac* (§ 2.4.1.1, E § 1).
**arlote** *iz.*
*arlote* (E § 1, § 2.4.1.2).
**arloteria** iz.
*arloteriaren*, *arloterias* (§ 2.4.1.2)
**arrazeo** *iz.* arrazoia.
*arraçeonac* (§ 2.2.8.23).
Ik. **arrazio**.
**arrazio** *iz.*
*arrazio*, *arracio, arracioaren*, *arraciorequi*, *arracioa* (§ 2.4.1.1), *arracioric* (§ 2.2.8.22), *arraciorengatic*, *arracioac*, *arracio* (§ 2.3.8), *arracioa*, *arracios*, *arracio*, *arracioric*, *arracioaren* (§ 2.4.1.2), *arracio*, *Arracioric arracioa* (§ 2.4.2).
Ik. **arrazeo**.
**[arrobatu]** *ad.* Lapurtu.
*arrobasen* (§ 2.2.8.4).
**arroitu** *iz.* Soinu, zarata.
*arroytu* (§ 2.4.1.1).
**arte** *iz.*
*arte* (§ 2.2.12), *artean* (§ 2.2.7.2, § 2.2.7.3, § 2.2.7.4, § 2.2.7.9, § 2.2.14.2, § 2.3.3, § 2.3.4, § 2.3.5, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *artetic* (§ 2.3.1), *artea* (§ 2.3.2), *arteraño* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *arterayno* (§ 2.4.1.1), *arteo* (§ 2.4.2).
Ik. **erte**.
**asaba** *iz.* Birraiton-birramona.
*asabac*, *asabac* (§ 2.2.8.5).

**askazi** *iz.* Ahaidea.
*azcaçia* (E § 1).
**asko** *zenbt. zehaztgb.*
*asco* (§ 2.2.8.9, § 2.2.12, § 2.2.19.3, § 2.2.19.4, § 2.2.24, § 2.3.5, § 2.4.1.1, § 2.4.1.1) *ascorequin*, *ascoz* (§ 2.3.5), *ascotan*, *ascoc* (§ 2.4.1.1).
**astaparra** *iz.* Atzaparra.
*astaparra* (E § 1).
**astregun** *iz.* Asteleguna.
*astregunetan* (§ 2.4.1.1).
**atari** *iz.* Atea.
*atarian* (§ 2.2.8.7, § 2.2.19.3), *atarietan* (§ 2.3.3, § 2.4.1.1), *atariac* (§ 2.3.10), *atari* (§ 2.4.1.1), *ataria* (§ 2.4.1.2).
**atera** *ad.*
*atera* (§ 2.2.8.7, § 2.2.8.21, § 2.2.8.22, § 2.3.1, § 2.3.3, § 2.3.7, § 2.3.9), *ateraco* § 2.3.6, § 2.3.9).
Ik. **atere** eta **ateri**
**atere** *ad.* Atera.
*atere* (§ 2.3.5).
Ik. **atera** eta **ateri**.
**ateri** *ad.* Atera.
*ateri* (§ 2.3.6).
Ik. **atera** eta **atere**.
**atzendu** *ad.* Ahaztu.
*acenduric* (§ 2.2.12), *açenduric* (§ 2.3.9.3).
**aufer** *adj.*
*aufer* (§ 2.4.1.2).
Ik. **alfer**.
**aunitz** *zenbt. zehaztgb.*
*auniz* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *aunizec* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *aunizengatic* (§ 2.4.1.1), *auniçec* (§ 2.4.1.2), *aunicetan* (§ 2.4.1.2).
Ik. **anitz**
**aurkendu** *ad.* Aurkitu.
*aurquendu*, *haurquendu*, *aurquenduco*, *aurquencera* (§ 2.4.1.1), *aurquenduco*, *aurquen*, *aurquençen* (§ 2.4.1.2).
Ik. **aurkindu** eta **aurkitu**.
**[aurkindu]** *ad.* Aurkitu.
*aurquin*, *aurquincean* (§ 2.4.1.1).
Ik. **aurkendu** eta **aurkitu**.
**aurkitu** *ad.*
*aurquitu* (§ 2.2.8.21, § 2.3.3) *aurquitzen* (§ 2.2.24), *aurquitcen*, *aurquitceco* (§ 2.3.10).
Ik. **aurkendu** eta **aurkindu**.
**aurpegi** *iz.*
*aurpeguiarequi* (§ 2.4.1.2), *aurpeguian* (§ 2.4.2).
Ik. **aurtegi**.
**aurre** *iz.*
*aurreco* (§ 2.2.8.22), *aurrean* (§ 2.3.3, § 2.3.10, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *aurrera* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2).
**aurtegi** *iz.*
*aurtegui*, *aurteguia* (§ 2.3.10).
Ik. **aurpegi**.
**axari** *iz.* Azeria.
*axari*, *axaricume*, *axaria*, *asari*, *ajari* (E § 1).
Ik. **azeari**.
**azeari** *iz.* Azeria.
*acearia* (§ 2.2.19.3)
Ik. **axari**.

## B

**bagats** *adj.* Emagaldua.
*bagasa* (§ 2.2.8.21).
**baia** *junt.* Baina.
*baya* (§ 2.2.14.1, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2).
Ik. **baina** eta **bino**.
**baina** *junt.*
*baña* (§ 2.2.14.3, § 2.2.21, § 2.3.8, § 2.3.9.3, § 2.4.2), *vaña* (§ 2.3.8), *bayna* (§ 2.4.2).
Ik. **baia**.
**baldinba** *adb.* Ziurrenik.
*baldinba* (§ 2.2.8.12, § 2.2.8.21).
**baliotu** *ad.* Baliagarri izan.
*baliotuco baçaigu* (§ 2.4.1.2).
**bankal** *iz.* Mahai-tapiza.
*bancal* (§ 2.3.7).

**bapedera** *izord*. Norbera.
*bapederac* (§ 2.2.12).
Ik. **bapedra.**
**bapedra** *izord*.
*bapedraren* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1), *bapedrac*, *bapedra* (§ 2.4.1.1).
Ik. **bapedera**.
**baradizu** *iz*.
*baradiçu* (§ 2.2.2).
Ik. **paradisu**.
**baratx** *adb*. Astiro, emeki.
*baracheco* (§ 2.4.1.1).
**barur** *iz*. Barau.
*barurac*, *barur*, *barurarequi*, *baruric* (§ 2.4.1.1).
**[barurtu]** *ad*.
*barutcen* (§ 2.3.10), *barurçera* (§ 2.4.1.1), *barurcea* (§ 2.4.2).
**bedeizio** *iz*.
*bedeicioa* (§ 2.4.1.2), *bedeicioarequi* (§ 2.4.2).
**bedikatu** *ad*. Bedeinkatu.
*bedicatua* (§ 2.3.1).
**[begira edun]** *ad*. Zaindu, begiratu.
*beguira euqueçu* (§ 2.2.8.2), *beguiraúçu* (§ 2.2.14.1), *beguira biute* (§ 2.2.8.21).
**beharrazaldeko** *iz*. Belarrondokoa.
*bearraçaldecoac* (§ 2.4.1.1).
**behar** *adj*. Behartsua.
*gende bearrey* (§ 2.4.1.1).
**beharri**
1. *iz*. Belarria.
*bearrietacoac* (§ 2.3.9.1), *bearriec* (§ 2.4.1.1).
2. *iz*. Kirtena.
*bearria* (§ 2.2.8.12).
**behatz** *iz*. Hatz lodia.
*beaz* (§ 2.4.1.2), *beaza* (§ 2.4.2).
Ik. **eri**
**beheiti**. *adb*.
*beytiena* (§ 2.4.1.1).
**bekala** *adb*. Bezala.
*bequala* (§ 2.2.7.5), *becala* (§ 2.2.7.5, § 2.3.8, § 2.3.9, § 2.4.1, § 2.4.2, § 2.3.9.3), *vecala* (§ 2.3.8, § 2.3.9.1, § 2.2.8.13), *bequalacoas* (§ 2.2.8.4).
Ik. **bezala**.
**bekanbates** *junt*.
*becambates* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2).
Ik. **bezainbates**
**bekoki** *iz*.
*becoquian* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *becoquitic* (§ 2.4.1.2).
Ik. **kopeta**.
**beldur** *iz*.
*beldurrequi* (§ 2.2.12), *beldurrac* (§ 2.3.8), *beldurraren* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *beldurra* § 2.4.2).
Ik. **bildur**.
**[beldurtu]** *ad*.
*beldurcen* (§ 2.4.1.2).
**[betatu]** *ad*. Bete.
*betatçén* (§ 2.2.14.1).
**bezainbatez** *lok*.
*beçanbates* (§ 2.2.8.16, § 2.4.1.1), *beçambates* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2).
Ik. **bekanbates**.
**bezala** *adb*.
*vezala* (§ 2.3.9.1, § 2.4.1.1), *beçala* (§ 2.2.7.9, § 2.2.8.4, § 2.2.8.8, § 2.2.10, § 2.3.1, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *bezala* (§ 2.2.8.7, § 2.3.2, § 2.3.4, § 2.3.5, § 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2).
Ik. **bekala**.
**bianda** *iz*. Elikagaia.
*vianda* (§ 2.4.1.2).
**bidero** *adb*. Bidezki.
*videro* (§ 2.4.1.2).
**bigel** *iz*. Atzea.
*bigueletarat* (§ 2.2.8.9).
Ik. **gibil**.
**bildur** *iz*.
*bildur* (§ 2.2.1, § 2.2.19.3).
Ik. **beldur**.
**bino** *junt*. Baina.
*biño* (§ 2.3.6).
Ik. **baia** eta **baina**.
**bioka** *iz*. Behor gaztea.
*bioca* (§ 2.3.7).

**bodin** *iz.* Neurri mota.
*bodin*, *bondi* (§ 2.2.16).

**bofeton** *iz.* Belarrondokoa.
*bofeton* (§ 2.2.8.23).
Ik. **bufeta**.

**bortsa** *iz.* Bortxa.
*vorssa* (§ 2.2.7.5), *borcha* (§ 2.2.8.5).
Ik. **portxa**.

**bufeta** *iz.* Belarrondokoa.
*buffeta* (§ 2.2.8.2).
Ik. **bofeton**.

**burdi** *iz.* Gurdia.
*burdia* (§ 2.3.6).

**burdina** *iz.*
*burdinariq*, *burdiña* (§ 2.3.4).
Ik. **burnia** eta **burrina**.

**burni** *iz.*
*burnia* (§ 2.2.19.3), *burniari* (§ 2.2.19.3), *burniac* (§ 2.4.1.1).
Ik. **burdina** eta **burrina**.

**burrina** *iz.* Burdina.
*burriña* (§ 2.2.20).
Ik. **burdina** eta **burnia**.

**burringi** *iz.* Lan tresna bat.
*burringuia* (E § 1).

**buruzi** *iz.* Guraizea.
*buruci* (§ 2.3.7).

**buztain** *iz.* Buztana, itsatsa.
*buztayna* (§ 2.2.6).

## D

**deus** *adb.* Ezer.
*deus* (§ 2.2.2, § 2.3.6, § 2.3.8, (§ 2.3.10, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *deusherere* (§ 2.4.1.1), *deu-setic* (§ 2.4.2).

**dina** *adb.* Adina.
*dina* (§ 2.3.8).

**doilor** *adj.*
*dollor* (§ 2.2.8.12), *doilor*, *dollor* (E § 1).
Ik. **dolor**.

**dolor** *adj.*
*dolor* (§ 2.2.8.9, E § 1).
Ik. **doilor**.

**dukat** *iz.* Antzinako urrezko eta zilarrezko moneta.
*ducaten* (§ 2.3.3, § 2.3.7), *ducat* (§ 2.3.7).

## E

**edeki** *ad.* Kendu, erauzi.
*edequiric* (§ 2.2.12, § 2.4.1.2), *ede-qui* (§ 2.3.3, § 2.4.1.1), *edequizen* (§ 2.3.3), *edequicen* (§ 2.4.1.2).

**edekitzaile** *iz.*
*edequiçallea*, *edequizallea* (§ 2.2.8.1).

**ediren** *ad.* Aurkitu.
*ediren* (§ 2.3.4, § 2.3.5).

**eduki** *ad.*
*eduqui* (§ 2.2.8.9).
Ik. **iduki**.

**egeki** *adj.* Emakume ezkonduak iraintzeko hitza.
*egequia* (E § 1).

**egu** *izlag.* Gaur, gaurko eguna.
*egu* (§ 2.4.2)
Ik. **egun**.

**egun**
1. *izlag.* Gaur.
*egun* (§ 2.2.7.9, § 2.2.8.7, § 2.2.8.15, § 2.3.1, § 2.3.2, § 2.3.8, § 2.3.9.1, § 2.3.10, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *egungo* (§ 2.2.8.15, § 2.3.8, § 2.3.9.1, § 2.4.2).
Ik. **egu**.
2. *iz.* 24 orduko denbora bitartea.
*egun hon* (§ 2.2.1), *egunean* (§ 2.2.2, § 2.2.8.14, § 2.2.17, § 2.3.1, § 2.3.5, § 2.3.9.1, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *egunac* (§ 2.2.8.3), *egunetan* (§ 2.2.8.3, § 2.4.1.1), *egun* (§ 2.2.8.7, § 2.2.14.3, § 2.3.4, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.1.2), *egunorozco* (§ 2.3.1), *egunen* (§ 2.3.3), *egu-noro* (§ 2.3.8), *eguna* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1), *egunera* (§ 2.3.8),

*egunoros*, *egunorosco* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *egunetaco* (§ 2.4.1.1), *egunas* (§ 2.4.1.2, § 2.4.2), *egunes* (§ 2.4.1.2).

**eguraldi** *iz*. Eguraldi ona.
*eguraldi* (§ 2.2.19.3).

**eguzki** *iz*.
*eguzquiari* (§ 2.3.9.3).
Ik. **iguzki**.

**eile** *iz*. Artilea.
*elleas* (§ 2.3.8).

**eilegatu** *ad*.
*ellegatceagatic*, *ellegatuco* (§ 2.3.10).
Ik. **ailegatu**.

**eiloba** *iz*. Iloba.
*elloba* (§ 2.3.8).

**eltzari** *iz*. Eltzekaria.
*elzari* (§ 2.3.8).

**emakunde** *iz*. Emakumeen bilera.
*emacunde* (E § 1).

**eragin** *ad*. Egin arazi.
*eraguiñen* (§ 2.3.6), *eraguiten* (§ 2.4.1.2).

[***eraizen**] *ad*. Piztu.
*eraiçeten* (§ 2.2.2).

**eraitzi** *ad*. Eraitsi.
*eraici* (§ 2.4.1.2).

**eraizio** *iz*. Ereintza.
*eraicioaren, eraicio* (§ 2.3.8).

**eramo** *iz*. Eraman.
*eramo*, *eramoceagatic*, *eramoceco*, *eramoco* (§ 2.4.1.1), *eramocen* (§ 2.4.1.2).

**eratu** *ad*. Erotu.
*heratu* (§ 2.4.1.1).

**erausi** *ad*. Orro egin.
*erausi* (§ 2.2.19.3).

[**erautsi**] *ad*. Jaitsiarazi.
*erausten* (§ 2.4.1.1).

**erdetsi** *ad*. Erdietsi, lortu.
*erdexten*, *erdechicen* (§ 2.3.8), *erdesteco*, *erdetsi*, *erdesten*, *erdesi*, *erdetsico* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *erdetsis*, *erdestera*, *erdesteagatic*, (§ 2.4.1.2), *erdechico*, *erdechicen* (§ 2.4.2).
Ik. **erdetzi**.

**erdetzi** *ad*.
*erdezi*, *erdecico* (§ 2.4.1.1), *erdeciçera* (§ 2.4.1.2), *erdeci* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2).
Ik. **erdetsi**.

**eremu** *iz*. Oihana, basoa.
*eremuan* (§ 2.2.8.12).
Ik. **oihan**.

**1 eri** *iz*. Hatza.
*heri* (§ 2.4.1.1), *heriac* (§ 2.4.1.2), *eriarequi* (§ 2.4.2).
Ik. **behatz**.

**2 eri**
1. *adj*. Gaixoa.
*eri* (§ 2.2.14.1).
2. *iz*. Gaixoa.
*eriac* (§ 2.4.1.2, § 2.4.2).

**eritasun** *iz*. Gaixotasuna.
*eritasun* (§ 2.3.10), *eritasunaren* (§ 2.4.1.2).

**eritu** *ad*. Zauritu.
*erituric* (§ 2.3.10), *ericen* (§ 2.4.2).

**ero** *adj*.
*ero*, *eroa* (E § 1).

**erraile** *iz*.
*erralleac* (§ 2.4.1.1).

**erran** *ad*.
*erran* (§ 2.2.8.1, § 2.2.8.22, § 2.2.8.23, § 2.2.8.30, § 2.2.16, § 2.2.20, § 2.3.4, § 2.3.6, § 2.3.9.1, § 2.3.9.3, § 2.3.10, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *erraten* (§ 2.2.8.16, § 2.2.14.2, § 2.2.15, § 2.3.8, § 2.3.9.1, § 2.3.9.3, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *erranen* (§ 2.2.14.1, § 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *errayozu*, *erranion* (§ 2.3.6), *errateco*, *erranic* (§ 2.3.8), *erranes* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *erratera* (§ 2.2.16, § 2.4.1.1), *errateco, erranuen* (§ 2.4.1.1), *erranic*, *erratea*, (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *erratera*, *erranagatic* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *erratea*, *errançaçu*, *erranicaco* (§ 2.4.1.2), *errateare-*

*qui*, *erranzquizu* (§ 2.4.2), *herran* (§ 2.2.8.21, § 2.2.8.28).
Ik. **esan**.
**erreal** *iz*. Diru izena.
*erreal* (§ 2.3.7, § 2.4.1.1), *errealeco* (§ 2.3.7), *errealaco* (§ 2.3.7).
Ik. **erriel**.
**erreina** *iz*. Erregina.
*erreinaren* (§ 2.3.8, § 2.4.2), *erreina*, *erreyna* (§ 2.4.2).
Ik. **erregia** eta **erregina**.
**erregia** *iz*. Erregina.
*erreguia* (§ 2.3.1, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2) *erreguiaren* (§ 2.4.1.1).
Ik. **erreina** eta **erregina**.
**erregina** *iz*.
*erreguina* (§ 2.2.18).
Ik. **erreina** eta **erregia**.
**errekaitu** *iz*. Enkartu, mandatu.
*herrekaytu* (§ 2.2.8.7).
**erriel** *iz*. Diru mota.
*erriel* (§ 2.3.6).
Ik. **erreal**.
**erroi** *iz*.
*erroy* (§ 2.2.8.21, E § 1), *eroy, herroy* (E § 1).
**erromes** *adj*. Behartsua.
*erromes* (§ 2.2.15), *erromessori* (§2.2.8.26)
Ik. **errumes**.
**errumes** *adj*. Behartsua.
*errumes* (§ 2.2.16, E § 1).
Ik. **erromes**.
**erte** *iz*.
*ertean* (§ 2.2.18, § 2.3.1, § 2.3.9.3, § 2.4.1.2), *ertetic* (§ 2.3.1).
Ik. **arte**.
**ertxi** *ad*. Itxi.
*erchiric* (§ 2.3.10).
Ik. **ertzi**.
**ertzi** *ad*.
*ercicen* (§ 2.4.1.1).
Ik. **ertxi**.
**esan** *ad*.
*esaten* (§ 2.2.8.6), *essaten* (§ 2.3.3), *esan*, *esango* (§ 2.3.5).
Ik. **erran**.
**eskui** *iz*. Eskuina.
*escuieco* (§ 2.3.1, § 2.3.8), *escuian* (§ 2.3.1, § 2.3.8), *escuyan* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *escuietaco*, *escuieco*, *escuyetaco*, *escuyetan*, (§ 2.4.1.2), *escuyeco* (§ 2.4.1.2, § 2.4.2), *escuyac* (§ 2.4.2).
**esnegende** *iz*. Esnekia.
*esneguendeas* (§ 2.3.8).
**espara** *iz*. Euli mota bat.
espara (E § 1).
**esterju** *adj.* Pertsona gaizto, endemoniatu eta itxura txarrekoa.
*esterju*, *estterju* (§ 2.2.8.28).
**estrabi** *iz*. Ukuilu.
*estrabi* (§ 2.3.8).
**etxagorputz** *iz*.
*hechagorpuz* (§ 2.2.8.15).
**etxe** *iz*.
*eche* (§ 2.2.7.9, § 2.2.8.15), *hecheraco* (§ 2.2.8.2), *echeco* § 2.2.8.8), *echetic* (§ 2.2.8.21), *echean* (§ 2.2.8.21, § 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *echetic* (§ 2.2.8.22, § 2.4.1.2), *echeco* (§ 2.3.7), *echetan* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *echetic*, *echetara*, *echea* (§ 2.4.1.1).
Ik. **itxe**.
**etxeden** *ad*. Itxaron.
*echedaçue* (§ 2.4.1.1), *echeden* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2).
Ik. **etxiden**.
**etxiden** *ad*.
*echidéçu* (§ 2.2.14.1), *echiden* (§ 2.3.10), *echidetea* (§ 2.4.2).
Ik. **etxeden**.
**etzin** *ad*. Etzan.
*etziten*, *etziñic* (§ 2.3.10), *etciteracoan* (§ 2.4.2).
**eutzeki** *ad*. Atxiki.
*euçequico* (§ 2.4.1.2).
**exkomekatu** *ad*.
*excomecatu* (§ 2.4.1.1).
**exkomekazio** *iz*.
*excomecaçioaren* (§ 2.4.1.1), *escomecacioa* (§ 2.4.2).

**ezagun**
1. *ad.*
*eçagun* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *ezagun* (§ 2.4.1.1).
Ik. **ezagutu**.
2. *adj.*
*eçagunac* (§ 2.4.1.2).

**[ezagutu]** *ad.*
*ezaguzen* (§ 2.3.6), *ezagu* (§ 2.3.9.3), *eçagucen* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *eçagutçen* (§ 2.4.1.1), *eçagu*, *eçagutçen*, *eçaguturic*, *eçagutuco*, *eçagutuagatic*, *eçagutcen* (§ 2.4.1.2).
Ik. **ezagun**.

**ezkila** *iz.*
*ezquila* (§ 2.4.1.1), *ezquilac* (E § 1).

**ezkutu** *iz.* Antzinako urrezko eta zilarrezko zenbait diruren izena.
*escutu*, *escuturen* (§ 2.3.7).

## F

**faltsoro** *adb. Faltsuki.*
*falsoro* (§ 2.2.8.22).

**farraska** *iz.* Hondakina.
*farrasca* (§ 2.3.8).

**fite** *adb.* Berehala, laster.
*fite* (§ 2.3.8, § 2.3.10 § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *fiteago* (§ 2.4.1.1), *fitetcena* (§ 2.4.1.2).

**franko** *zenbtz. zehaztgb.*
*franco* (§ 2.3.6).

## G

**gaiztamandero** *iz.* Gaizkilea.
*gayztamandero*, *gaistamandero* (§ 2.2.8.5).

**gaiztoguille** *iz.*
*gayztoguillearen* (§ 2.2.8.6).

**galtzina-labe** *iz.*
*galcina-labera* (§ 2.4.1.1).

**gantz** *iz.* Koipea, bilgorra.
*gança*, *ganza* (§ 2.2.16).

**garagarril** *iz.* Ekaina.
*garagarrilla* (§ 2.2.5).

**gasna** *iz.*
*gasna* (§ 2.3.6).
Ik. **gazta**.

**gazta** *iz.*
*gastac* (§ 2.2.19.3), *gasta* (§ 2.2.4).
Ik. **gasna**.

**gaztigatu** *ad.*
1. *ad.* Jakinarazi.
*gaztigatu*, *gaztigacea* (§ 2.3.5).
2. *ad.* Zigortu.
*gaztigatu* (§ 2.4.1.1), *gastigaceagatic*, *gastiga* (§ 2.4.1.2).

**gaztigu** *iz.* Zigorra.
*gaztigutan* (§ 2.4.1.1).

**gendu** *iz.* Kendu.
*guenzera* (§ 2.2.21), *guençen* (§ 2.3.9.1), *guenceco* (§ 2.3.9.3), *guendu* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *guen*, *guenduco*, *guencera*, *guencen*, *guençen*, *guençea* (§ 2.4.1.2).
Ik. **kendu**.

**gibel** *iz.* Atzea.
*guibilat* (§ 2.3.6).
Ik. **bigel**.

**gibelatu** *ad.* Atzeratu.
*guibelatu* (§ 2.3.4).

**goiti** *adb.*
*goyti*, *goytiago*, *goytien*, *goytienera* (§ 2.4.1.1).

**goititu** *ad.* Altxatu.
*goytitu*, *goyticen* (§ 2.4.1.1).

**gomendatu** *ad.* Agindu, gomendatu.
*gomendatu* (§ 2.2.2, § 2.2.12.).

**guti**
1. *adj.* Txikia, ez deusa, laburra.
*guti* (§ 2.2.21, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *gutis* (§ 2.2.12), *gutiarequin* (§ 2.3.8), *guiti* (§ 2.3.9.1).
2. *zenbt. zehaztgb.*
*guti* (§ 2.2.8.20, § 2.2.21, § 2.3.6, § 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *gutirequin* (§ 2.3.8), *gutiago* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *guitivana* (§ 2.3.9.1),

*guitiago*, (§ 2.3.9.3), *gutiagorequi*, *gutitacoric*, *gutien* (§ 2.4.1.1), *gutienean*, *gutirequi*, *gutia*, *gutienean*, *gutiagatic* (§ 2.4.1.2), *guticoat* (§ 2.4.2).
Ik. **gutxi**.
3. *iz*. Pixka.
*guti* (§ 2.4.1.2), *gutico*, *guticoat* (§ 2.4.2).

**gutitu** *ad*.
*gutitu*, *gutituco* (§ 2.4.1.2).

**gutxi** *zenb. zehaztgb*.
*guchi* (§ 2.2.19.3), *guchibana* (§ 2.3.5).
Ik. **guti**.

## H

**hagitz** *adlag*.
*aguiz* (§ 2.3.5, § 2.3.6), *aguitz* (§2.3.10).

**hameka** *zenbt*.
*amecagarren* (§ 2.4.1.2), *amecagarrena* (§ 2.4.2).

**handi** *adj*.
*andi* (§ 2.2.10, § 2.2.21, § 2.3.8, § 2.4.2, E § 1), *andia* (§ 2.2.8.15, § 2.2.21, § 2.3.8, § 2.3.9.3, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2, E § 1), *andiari* (§ 2.2.10), *handia* (§ 2.2.10, § 2.2.24), *andiago*, (§ 2.2.18, § 2.4.1.1, § 2.4.2), *andis* (§ 2.2.18), *andiaren* (§ 2.2.21), *anditacoa* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1), *andiarequin* (§ 2.3.8), *andiarequi* (§ 2.3.9.1, § 2.3.9.3, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *andienetan* (§ 2.3.8), *andiena* (§ 2.3.8, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *andiac* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *anditaco, anditacoac* (§ 2.4.1.1), *andian* (§ 2.4.1.1, § 2.4.2), *andiagatic* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *andias* (§ 2.4.1.2, § 2.4.2), *andietatic* (§ 2.4.1.2), *andietan*, *andiarendaco* (§ 2.4.2).
Ik. **haundi**.

**handitasun** *iz*.
*anditasun* (§ 2.2.8.9), *anditasuna* (§ 2.2.19.3).

**handitu** *ad*.
*anditu* (§ 2.3.5, § 2.3.6).

**handur** *adj*. Doilor, zital.
*andurr*, *andurra* (§ 2.2.8.20, E § 1), *andur* (E § 1).

**harakai** *iz*. Animalia gizendua.
*aracaya*, *aracay* (§ 2.2.8.5).

**harane** *iz*. Haran.
*arane* (§ 2.2.19.1).

**hats** *adj*. Zikina, nazkagarria.
*asa* (§ 2.2.8.21, E § 1), *asza, az* (§ 2.2.8.21).

**haundi** *adj*.
*aundiago* (§ 2.3.9.3).
Ik. **handi**.

**higuitu** *ad*. higitu.
*iguitu* (§ 2.2.8.9).

**[hitza eduki]** *ad*. Hitza atxiki.
*eduqui nahi dituc heure hiçac* (§ 2.2.8.9).

**holtza** *iz*. Horma.
*olçeq* (§ 2.2.8.15).

**hurran** *adb*. Gertu.
*hurran* (§ 2.2.8.20).

**hurtsa** *iz*. Holtza.
*ursas* (E § 1).

**huts eguin** *ad*. Honra galdu.
*us eguinic* (§ 2.2.8.21).

## I

**iago** *adb*. Gehiago.
*iago*, *iagos*, *yago* (§ 2.3.8).

**Iangoiko** Ik. **Jangoiko.**

**Iaungoiko** Ik. **Jaungoiko**.

**iduki** *ad*.
*iduqui* (§ 2.3.5, § 2.4.1.1), *iduqui* (§ 2.3.8, § 2.4.2), *iduquiçearequi* (§ 2.3.9.1), *iduquico*, *iduquitu*, *iducaçu*, *iduquituric*, *iduquiac*, *iduquico* (§ 2.4.1.1), *iduquicea* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *iduquicera*, *iduquicen*, *iduquicea* (§ 2.4.2).
Ik. **eduki**.

**[idurikatu]** *ad.* Itxura egin.
*hiduricacequo* (§ 2.2.8.4).
**[idutzi]** *ad.* Utzi.
*idusten* (§ 2.3.7).
Ik. **iutzi** eta **utzi**.
**ifeni** *ad.*
*ifeni* (§ 2.2.22, § 2.3.5).
Ik. **imini**.
**igan** *ad.* Igo.
*igan* (§ 2.2.17, § 2.3.2, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *igan* (§ 2.4.1.1, § 2.4.2).
Ik. **igo**.
**igo** *ad.*
*igo*, *igo* (§ 2.3.1).
**igorri** *ad.* Bidali.
*igorcen*, *igor*, *igorcea*, *igorri*, *igor*, *igorrico*, *igorrico* (§ 2.4.1.1).
**iguzki** *iz.*
*iguzqui* (§ 2.2.21, § 2.4.2), *iguzquia* (§ 2.3.10, § 2.4.2), *iguzquitic* (§ 2.4.2).
Ik. **eguzki**.
**ihor** *izord.*
*ior* (§ 2.2.10, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *iorr* (§ 2.3.2), *ihorc* (§ 2.4.1.2), *ior* (§ 2.4.2), *iori* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *iorc* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *ioren* (§ 2.4.1.2).
Ik. **inor** eta **nihor**.
**ilki** *ad.* Elki.
*ilquico* (§ 2.2.8.12).
**imini** *ad.*
*iminico* (§ 2.3.3, § 2.3.8), *iminico* (§ 2.3.3), *imini* (§ 2.3.8, § 2.4.2), *imin*, *imincen* (§ 2.3.10, § 2.4.2), *imiñi* (§ 2.3.10).
Ik. **ifeni**.
**inkatz** *iz.* Ikatza.
*incaç* (E § 1).
**ino** *ad.* Kirrinka egin.
*inno* (§ 2.2.19.3).
**inor** *izord.*
*iñorq* (§ 2.3.7), *inoren* (§ 2.2.19.3).
Ik. **ihor** eta **nihor**.
**isuski** *iz.* Erratza.
*isusquia*, *ichusquiaren* (§ 2.2.8.12).
**itxe** *iz.*
*Hytzokosanma* (§ 2.2.4), *icheco*, *ichequaq*, *ichia* (§ 2.3.7), *ichea*, *ichean*, *iche* (§ 2.3.9.1).
Ik. **etxe**.
**iutzi** *ad.* Utzi.
*juci*, *jutci* (§ 2.3.1), *yuiz* (§ 2.3.5).
Ik. **idutzi** eta **utzi.**
**izotzil** *iz.* Urtarrila.
*içozil* (§ 2.2.5).

## J

**Jainko** *iz.*
*Jaincoaren* (§ 2.2.8.3), *Jaincoa* (§ 2.3.10), *Jaincoac* (§ 2.2.8.14, § 2.2.9, § 2.2.18, §2.3.8), *Jaincoach* (§ 2.2.8.22).
Ik. **Jangoiko** eta **Jaungoiko.**
**jaitsi** *ad.*
*jaisi* (§ 2.3.1), *jayci* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *jaycicen, jaichi* (§ 2.4.2).
Ik. **jaitzi** eta **jautsi**.
**jaitzi** *ad.*
*jayci* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *jaycicen* (§ 2.4.2).
Ik. **jaitsi** eta **jautsi**.
**Jangoiko** *iz.*
*Jangoicoaren* (§ 2.2.2), *Jangoico* (§ 2.2.8.14, § 2.3.8, § 2.3.9.1, § 2.3.10), *Jangoicoa* (§ 2.3.10) *Iangoyco, Iangoycoac*, *Iangoycoa*, *Iangoycoari* (§ 2.3.2), *Iangoycoarenganic* (§ 2.4.1.1), *Jangoycoaren* (§ 2.2.8.7), *Jangoycoagana* (§ 2.2.12), *Jangoycoaren* (§ 2.2.14.3, § 2.4.2), *Jangoy[* (§ 2.3.1), *Jangoycoa Jangoycoac*, *Jangoyco*, *Jangoycoari*, *Jangoycoarengana*, *Jangoycoarequi* (§ 2.4.2).
Ik. **Jainko** eta **Jaungoiko.**
**jantzi** *ad.*
*jancicen* (§ 2.4.1.1).
Ik. **jauntzi**.
**Jaungoiko** *iz.*
*Iaungoycoa* (§ 2.3.2, § 2.4.1.1 § 2.4.1.2), *Iaungoycoaren* (§ 2.3.2, § 2.4.1.1,

§ 2.4.1.2), *Iaungoycoari* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *Iaungoyco*, *Iaungoycoarequi*, *Iaungoycoac* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *Iaungoycozat*, *Iaungoycoarenganic*, *Iaungoycoarena* (§ 2.4.1.1).
Ik. **Jainko** eta **Jangoiko**.

**jauntzi** *ad*. Jantzi.
*jaunçiric* (§ 2.2.16).
Ik. **jantzi**.

**jaurri** *iz*. Jauregia.
*yaurri* (§ 2.2.8.15).

**jautsi** *ad*. Jaitsi.
*jáusten* (§ 2.2.14.1), *jautsi* (§ 2.3.1), *jautssi* (§ 2.3.2), *jausi* (§ 2.2.17, § 2.4.2), *jaussi* (§ 2.4.1.2), *jauchi* (§ 2.4.2), *yauci* (§ 2.4.1.1).
Ik. **jaitsi** eta **jaitzi.**

**jin** *ad*. Etorri.
*gin* (§ 2.2.8.12).

**jo** *ad*.
1. Sexu harremana izan.
*jo* (§ 2.2.7.8), *joçen* (§ 2.2.8.9).
2. Bidea hartu.
*jo* (§ 2.4.1.1).

**judisio** *iz*.
*judision* (§ 2.2.12).

**juizio** *iz*.
*juicioco* (§ 2.3.8), *juicio* (§ 2.3.9.3, § 2.4.1.2), *juicioa*, *juicioan* (§ 2.4.2).
Ik. **judisio**.

## K

**karrika** *iz*.
*carriquetan* (§ 2.2.14.2, § 2.4.1.1).

**[kendu]** *ad*.
*quencen* (§ 2.3.8, § 2.4.2).
Ik. **gendu**.

**kokin** *adj*. Barrabasa.
*coquin* (E § 1).

**komekatu** *ad*.
*comecacera* (§ 2.3.8), *comeca* (§ 2.3.8), *comecacea*, *comecacen* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *comecaceco*, *comecaceas*, *comecaceac* (§ 2.4.1.1), *comecaçea*, *comecaçeas*, *comecaçen*, *comecacearen*, *comecatus* (§ 2.4.1.2), *comecacera*, *comecatu* (§ 2.4.1.2, § 2.4.2), *comecacearequi*, *comecatuas*, *comecaceracoan* (§ 2.4.2).

**komekazio** *iz*.
*comecacioa*, *comecacioaren* (§ 2.4.2).

**konbertsatu** *ad*. Bizi izan.
*conversatu* (§ 2.4.1.2).

**kopeta** *iz*.
*copetan*, *copetatic* (§ 2.4.2).
Ik. **bekoki**.

**kosna** *iz*. Koltxoia, lastaira.
*cosna* (§ 2.3.7).

## L

**ladron** *iz*.
*ladronaq* (§ 2.2.8.5), *ladronen*, (§ 2.2.8.5, § 2.3.10), *ladronec* (§ 2.4.1.2), *ladron* (E § 1), *ladrona* (§ 2.3.10, E § 1).

**[lagun izan]** *ad*.
*lagun daquiala* (§ 2.2.8.12).

**laidu** *iz*. Intziri.
*laiduz* (§ 2.2.19.1).

**lander** *iz*. Behartsua.
*landerra* (E § 1).

**lapur** *iz*.
*lapur* (§ 2.2.8.7).
Ik. **napur**.

**laureko** *iz*. Lau maradebiko balioa zuen diru zaharra.
*laureco* (§ 2.4.1.2).

**laztail** *iz*. Urria.
*laztalla* (§ 2.2.5).

**legar** *iz*. Ahoko eritasuna.
*legarra* (E § 1).

**lehengusi(a)** *iz*. Lehengusina.
*lengusia* (§ 2.3.8).

**leku egin** *ad*. Alde egin, lekua utzi.
*lequ eguioçu* (§ 2.2.8.2).

**lengoaie** *iz*. Hizkuntza.
*lengoaíe* (§ 2.2.10), *lengoagean* (§ 2.4.1.1).

**libertatu** *adj*. Ausartegia, lotsagabea.
*libertatua*, *libertatuac*, *libertatuen*, *libertatuendaco*, *libertatu* (§ 2.2.8.15).
**ligugende** *iz*. Lihoz egindako jantzia.
*ligugende* (§ 2.3.8).
**lotsa** *iz*. Nahasmena.
*lotsa* (§ 2.2.19.3).
**[lotsatu]** *iz*. Beldurtu.
*lotçacen* (§ 2.4.1.2).
**lotzazale** *adj*. Beldurra eragiten duena.
*lotzazale* (§ 2.2.21).

## M

**maingi** *iz*. Maingua.
*maingui* (§ 2.2.8.8).
**[mantenatu]** *ad*.
*mantenaceco* (§ 2.2.7.3), *mantenaçen* (§ 2.2.7.7), *mantenacen* (§ 2.2.8.5, § 2.4.1.2), *mantena* (§ 2.2.14.3).
**matela** *iz*. Masaila.
*matela* (§ 2.2.8.21).
**mehaka** *adj*. Meharra, estua.
*meaqua* (E § 1).
**mota** iz. Arraza.
*mota* (E § 1).

## N

**nastadore** *adj*. Nahaslea.
*nastadore*, *nastadorea* (§ 2.2.8.3).
**napur** *iz*. Lapurra
*napura* (E § 1).
Ik. **lapur**.
**neskato** *iz*. Neskamea.
*nescato*, *nescatoa* (§ 2.2.8.19).
**nihor** *izord*.
*niorc* (§ 2.2.12, § 2.3.3, § 2.3.5), *nior* (§ 2.2.24), *niori* (§ 2.3.5).
Ik. **inor** eta **ihor**.

## O

**ohatze** *iz*.
*goatcean* (§ 2.3.10), *ohatcetic*¸ *ohatcera* (§ 2.4.1.2).
**ohabete** iz. Ohe estalkia.
*ohavete* (E § 1).
**oihan**
1. *iz*. Basoa.
*oyanean* (§ 2.2.8.12), *oyan* (§ 2.2.19.3).
2. *iz*. Mendia.
*oyanera*, *oyana*, *oyanean* (§ 2.4.1.1).
Ik. **eremu**.
**oilaka** *adj*. Emagaldua.
*ollaca* (E § 1).
**oinaztura** *iz*. Tximistargia.
*oñazturac* (§ 2.4.1.1).
**okelatu** *adj*. Baztertua, marginatua.
*oquelatu* (§ 2.2.8.21).
**okelu** *iz*. Bazterra, barrena.
*oquelu* (§ 2.2.8.4).
**olatze** *iz*. Estalpea.
*olazeneco* (§ 2.2.8.11), *olaçe*, *olaze* (§ 2.2.13).
**omen** *iz*. Ospea.
*omena* (§ 2.2.16).
**on hartu** *ad*. Baliatu, aprobetxatu.
*on artuengatic* (§ 2.2.8.21).
**or** *iz*. Zakurra.
*hor* (§ 2.2.8.11).
**orai** *adb*.
*orai* (§ 2.3.5, § 2.3.8, § 2.3.9.3, § 2.3.10. § 2.4.2, § 2.2.14.2, § 2.2.20, § 2.3.4, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *oraico*, *oraicoa* (§ 2.3.8), o*ray* (§ 2.2.8.3, § 2.2.8.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *orayco* (§ 2.2.8.21).
Ik. **orain**.
**orain** *adb*.
*orayngo* (§ 2.2.8.22), *orayn* (§ 2.3.1).
Ik. **orai**.
**oren** *iz*. Ordua.
*orenenetaco* (§ 2.3.4).
Ik. **oron.**

**oron** *iz*. Orena, ordua.
*oronac* (§ 2.2.8.3), *oron* (§ 2.3.8), *horon* (§ 2.4.1.1).
Ik. **1 oren**

**orratu** *ad*. Aurreztu.
*orrattu* (§ 2.2.8.22).

**ortots** *iz*. Trumoia.
*ortosas* (§ 2.4.1.1).

**ortzi** *ad*. Ehortzi.
*orçiric* (§ 2.2.12), *orsi* (§ 2.2.17), *orciric* (§ 2.3.10), *orçiçea*, *ortci* (§ 2.4.1.2), *orzi*, *orstea* (§ 2.4.2).
Ik. **ostu** eta **oztu.**

**orzilare** *iz*. Ostirala.
*orzillare*, *orcillare*, *horcillare* (§ 2.4.1.1).

**ostu** *ad*.
*ostu* (§ 2.3.1).Ik. **ortzi** eta **oztu**.

**otasa** *iz*. Ogi mota.
*otasa* (§ 2.2.8.7).

**otoi egin** *ad*. Erregutu, eskatu.
*otoi eguiten* (§ 2.3.4).

**otoitz** *iz*.
*otoiz* (§ 2.3.5, § 2.4.2).

**ozar** *adj*. Zakur handia.
*oçar* (§ 2.2.8.1, E § 1).

**ozminarri** *iz*. Tximista, aire gaiztoa.
*ozminarri* (§ 2.4.1.1).

**oztu** *ad*. Ehortzi.
*oztu* (§ 2.2.19.3).
Ik. **ortzi** eta **ostu**.

## P

**paradisu** *iz*.
*paradisuco* (§ 2.3.1).
Ik. **baradizu**.

**pazia** *iz*. Eltzea, pertza.
*paciaq* (§ 2.3.7).

**pedriku** *iz*.
*pedricu* (§ 2.4.2).
Ik. **prediku**.

**penitentzia** *iz*.
*penitenzia* (§ 2.3.9.3), *penitencia* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *penitenciascoac* (§ 2.4.1.1), *penitenciaren* (§ 2.4.1.2), *penitenciac*, *penitencias* (§ 2.4.2).
Ik. **peretentzia**.

**peretentzia** *iz*. Penitentzia.
*peretençia* (§ 2.2.2).
Ik. **penitentzia**.

**perrote** *iz*. Zenbait eraikinek duten harrizko sostengua.
*perrotes* (E § 1)

**podore** *iz*. Boterea.
*podore* (§ 2.3.1, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *podorea* (§ 2.3.1, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *podoreari* § 2.3.9.3), *podorearequi* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *podores* (§ 2.4.1.2).

**portxa** *iz*. Bortxa (?).
*porcha*, *porchara* (§ 2.2.8.5).
Ik. **bortsa**.

**prediku** *iz*.
*predicuac* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *predicu* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1).
Ik. **pedriku**.

## S

**sabala** *iz*. (?)
*savaba* (§ 2.3.7).

**sanda** *iz*. Santa, emakume santua.
*sanda* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2)

**sandu**
1. *adj*.
*sanduac* (§ 2.2.7.7, § 2.2.7.9, § 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *sanduaren* (§ 2.2.7.9, § 2.2.8.19, § 2.2.15, § 2.3.2, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *sandu* (§ 2.2.8.15, § 2.2.14.2, § 2.3.2, § 2.3.10, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *sanduen* (§ 2.2.8.15, § 2.2.14.2, § 2.4.1.2), *sandúari*, *sanduác*, *sandurá* (§ 2.2.14.1), *sanduari* (§ 2.2.14.2, § 2.2.14.3), *sanduen* (§ 2.2.14.2, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2,

§ 2.4.2), *sandua* (§ 2.3.2, § 2.3.10, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *sanduan* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *sanduarequi*, *sandura* (§ 2.4.1.1), *sanduco*, *sanduas*, *Sanduarendaco*, *sanduagana*, *sanduena* (§ 2.4.1.2), *sanduarenganic*, *sanduarenac, sanduey*, *sanduago* (§ 2.4.2).

2. *iz.*

*sandu* (§ 2.2.14.2, § 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *sanduen* (§ 2.2.15, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *sandua* (§ 2.3.9.3), *sandurena*, *sanduren* (§ 2.3.8), *sanduec* (§ 2.3.8, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2), *sanduey* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *sandues*, *sanduac* (§ 2.4.1.1), *sanduarenac* (§ 2.4.1.2), *sanduenac* (§ 2.4.1.2, § 2.4.2).

Ik. **santu**.

**sandulari** *iz.* Erromesa.

*sandulariac* (§ 2.2.18).

**santristope** *iz.* Hidropesia.

*santristope*, *santistrope* (E § 1).

**santu**

1. *adj.*

*santu* (§ 2.2.15, § 2.3.8), *santuac* (§ 2.3.3).

2. *iz.*

*santu* (§ 2.2.19.2, § 2.3.7).

Ik. **sandu**.

**semazte** *iz.* Emaztea.

*semazteren* (§ 2.2.7.1).

**sinestatu** *ad.* Sinestu.

*sinestasen* (§ 2.2.17), *sinestacen* (§ 2.3.1, § 2.4.1.1, § 2.4.1.1 § 2.4.2), *sinestacea* (§ 2.3.1, § 2.3.2, § 2.4.1.1, § 2.4.2), *sinestatcen* (§ 2.3.2), *sinestatcea* (§ 2.3.2, § 2.4.1.1), *sinestatu*, *sinestatcen* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.1), *sinestatzen* (§ 2.4.1.1), *sinesta* (§ 2.4.1.1, § 2.4.2), (§ 2.4.1.1), *sinestacea* (§ 2.4.1.1), *sinestatcean*, *sinestatuagatic*, *sinestatce*, *sinestatçen*, *sinestatçea* (§ 2.4.1.1), *sinestazen* (§ 2.4.2), *siñestazen* (§ 2.3.9.3).

Ik. **sinistatu** eta **zinestatu**.

**[sinistatu]** *ad.*

*sinistaçen*, *sinistacen*, *sinistace[a]*, *sinistatcea*, *sinistacea* (§ 2.3.1).

Ik. **sinestatu** eta **zinestatu**.

**sona** *iz.*

*sona* (§ 2.3.7).

**sortu** *ad.* Gortu.

*sorturic* (§ 2.3.9.1, § 2.3.9.3).

**sos** *iz.* Dirua.

*sos* (§ 2.3.4).

## T

**tripazai** *adj.* Jatuna.

*tripazayac* (§ 2.2.8.4).

**tximio** *iz.* Tximinoa.

*ximio* (E § 1).

**txispildu** *ad.* Kiskali.

*chispilduco* (§ 2.4.1.2).

## U

**ugazama** *iz.* Amaordea.

*uaçama*, *uazama* (§ 2.2.8.8).

**ukandu** *ad.*

*ucandu* (§ 2.2.17).

Ik. **ukindu**.

**ukindu**

*uquindu* (§ 2.2.8.21).

Ik. **ukandu**.

**ultzitu** *ad.* Eultzitu, garia jo.

*ultçituric* (§ 2.2.14.3).

**umegile** *iz.*

*humeguile* (§ 2.2.8.4).

**urrikarioso** *iz.* Errukitsua.

*urricariosoa* (§ 2.3.10, § 2.4.1.1, § 2.4.1.2).

Ik. **urrikarizti**.

**urrikaritu** *ad.* Errukitu.

*urricari*, *urricaritu*, *urricaturico* (§ 2.4.1.1), *urricaricen* (§ 2.4.1.1), *urricaritcea* (§ 2.4.1.1).

**urrikarizti** *adj.* Errukitsua.
*urricarizti* (§ 2.2.19.3).
Ik. **urrikarioso**.

**urril** *iz.* Iraila.
*urrila* (§ 2.2.5).

[**urrin egin**] *ad.* Usaindu.
*urrin eguitea* (§ 2.4.1.2).
Ik. **usmatu**.

**urrin** *iz.* Usaina.
*urrina* (§ 2.4.2).

[**usmatu**] *ad.* Usaindu.
*usmacea* (§ 2.4.2).
Ik. **urrin egin**.

**utu** *iz.* Lapurra.
*utua* (E § 1).

**utzi** *ad.*
*uçico* (§ 2.2.8.22), *uci* (§ 2.3.6, § 2.3.8, § 2.4.2), *uzi* (§ 2.2.8.4, § 2.2.8.7, § 2.3.9.3), *uçac* (§ 2.2.8.3), *usdaçu* (§ 2.2.8.7), *uçiric* (§ 2.3.9.1), *uziceas* (§ 2.3.8), *utzi* (§ 2.4.1.1, § 2.4.1.2, § 2.4.2), *utziric* (§ 2.4.1.1), *utçiric* (§ 2.4.1.2).
Ik. **iutzi** eta **idutzi**.

## X

**xauro** *adb.* Garbiro, garbiki.
*xauro* (§ 2.2.14.2).

## Z

**zai** *iz.* zaintzailea.
*ardien zay* (§ 2.2.19.3).

**zamuka** *iz.* Kakoa.
*çamucas* (E § 1).

**zapu** *iz.* Apoa.
*çapu* (§ 2.2.8.1).
Ik. **apo**.

**zarrin** *iz.* Zerrautsa.
*zarrin* (§ 2.3.4).

**ziarri** *iz.* Belar pozointsua.
*ciarrias* (E § 1).

**zimur** *iz.*
*cimurra* (E § 1)

**zinestatu** *ad.*
*cinestatzen*, *cinestatcen* (§ 2.4.1.1).
Ik. **sinistatu** eta **zinestatu**.

**zoritu** *ad.* Heldu.
çorituric (§ 2.2.14.3).

**zorta** *iz.* Tanta.
*zorta* (§ 2.3.6).

### 3.4.2. Goi-nafarrera arkaiko eta zaharraren lexikoaren azterketa saio bat

Hiztegian dialektologikoki interesgarri iruditu zaizkigun hitzak aurkeztu ditugu; oraingo atal honetan hitz horietarik batzuk iruzkinduko ditugu.

Hitzak hautatzeko orduan erabilitako irizpide nagusia izan da testu batean baino gehiagotan erabiltzen den hitza edo aldaera izatea. Beraz, autore edo lekukotasun bakar batean ageri diren hitzak ez ditugu hona ekarri. Demagun, Beriainek *akar* 'ahakar, liskar' erabiltzen du. Hitz hori ez da Nafarroan berriro lekukotzen xviii. mendearen bigarren erdira arte, harik eta nafar batek eskura zuen Axularren liburuaren bigarren edizioko ale bati ohar batzuk egin zizkion arte (Los Arcos 1974: 70). Gerora hitz hori maiz agertzen bada ere, ez dugu zerrendara ekarri, lekukotasun urriak medio ezin dezakegulako ondorio handirik atera. Era berean, Zuazok (2008: 110) *arroitu* 'zarata' nafar hiztzat dakar, baina 1750 aurretik Beriainek bakarrik erabiltzen du; beraz, hori ere hemengo zerrendatik kanpo dago.

Bestalde, bi multzotan banatu ditugu hitzak. Lehen multzoan Nafarroako testu zaharretan orokorrak diren hitz eta aldaera dialektalak jaso ditugu, hau da, goi-nafa-

rreraren eremu osoan berdin, baina ez Euskal Herri osoan, erabiltzen diren hitz eta aldaerak (§ 3.4.2.1). Aldiz, bigarren multzoan dialektoaren barnean agertzen diren aldaerak eman eta horien eremuak zehazten saiatu gara (§ 3.4.2.2).

Oro har, hiztegian sartutako hitzak iruzkindu ditugu saio honetan; baina inoiz, lagungarri, geroagoko testu eta lekukotasunei ere begiratu diegu, batez ere *Orotariko Euskal Hiztegia*, Mitxelenak (1958) argitaratu zuen Aezkoa, Zaraitzu eta Erronkaribarreko Bonaparteren hiztegia eta Echaidek (1989) Nafarroan egindako galdeketak.

### *3.4.2.1. Nafarroako testu zaharretan orokorrak diren hitzak eta aldaerak*

*ago* 'aho'

Hasperena galdu izanaren ondorioz, zenbait kasutan *-g-* epentesia sortu da *ago* hitzean. 1745 aurreko testuetan epentesidun aldaera da nagusi. *OEH*ren arabera, hau da goi-nafarreraz erabiltzen den aldaera, baita Baztan eta Aezkoan ere; ez, ordea, Erronkaribarren. Zaraitzun *ago* daukagu (Mitxelena 1967). Lekukotasun zaharretan bi salbuespen baizik ez ditugu aurkitu: *aubecotic* dago Lekunberriko 1551ko esaldi batean eta *aubeco* Iruñeko 1535eko beste esaldi batean. Dena den, salbuespen sistematikoak dira, ez baita 'aho', baizik 'ahobeko' elkartua. Gainerakoan, beti dugu *ago*. Lapurdiko kostaldean ere *ago* dago.

*ahalke*

Inoiz Bizkai-Gipuzkoetako testuetan agertu arren, ekialde osoan erabiltzen den hitza da *ahalke*. Hitz horretaz gain, testu nafar zaharretan *ahalkegabe* eta *ahalketu* eratorriak ere ageri dira. Zenbait aldiz agertzen da *ahalke* testu zaharretan, eta esanahia ez da beti berbera. Iruñea inguruko XVI. mendeko agerraldi batzuetan 'lotsagabe' esanahia duela dirudi: *Aspaldian hi egoçirich ago, halquea!* Dena den, beste interpretaziorik izan lezake esaldi horrek: «Aspaldian hi egotzirik hago, [hori] ahalkea!» Mende hartan bertan, 'lotsa' esanahiarekin agertzen da Iruñeko 1594ko esaldian: *alquiric uquindu baçindu, eçinan etorrico onera*.

*Lotsa* hitza gutxitan agertzen da. Behin aurkitu dugu: Isastiren errefrauetan agertzen da eta bertako gaztelaniazko itzulpenaren arabera 'nahasmen' da esanahia. Beriainen dotrinak *lotçacen* dakar, baina 'beldurtzen' esan nahi du —Iparraldean eta Nafarroan ohikoa den adiera—, eta Felipe IV.ari kantatutako kopletan *lotzazale* agertzen da 'beldurra eragiten duen pertsona' izendatzeko. Lizarraga Elkanokoak ere *lotsa* eta hortik eratorritako *lotsamentu*, *lotsarritu*, *lotsagarri*... erabiltzen ditu, 'beldur' adieran.

*apez*

Nafarroako iparraldetik hasi eta hegoalderaino, *apez* da goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean agertzen den forma, eta toponimian ere beti agertzen da *apez*. Behin bakarrik aurkitu dugu *apaez* aldaera zaharragoa, Ultzama aldeko 1656ko esaldi batean. Ziurrenik *apez* aldaera *ae* > *e* bilakabidearen adibide bat besterik ez da, Nafarroako testu zaharretan dugun *hameka* bezala. Echaidek (1989) ez zuen bere galdeketan «apaiz» hitza jaso, baina zenbait galderaren erantzun gisa emandako esaldietan —esa-

terako, «bendición» hitza jaso nahi zen 170. galderan— nagusiki *apez* agertzen da, baina *apeizak* eta *apaizak* ere aurki daiteke han-hemen.

*argizagi*

Ez da testu zaharretan maizenik agertzen den hitza, baina hiru lekutan aurkitu dugu: Pater noster txikian, Beriainen meza entzuteko tratatuan eta Zubietako 1550eko esaldi batean. Hiru kasuetan esanahia 'kandela' da. Bonapartek Aezkoarako *argizari* aldaera dakar, eta *arzagi* Zaraitzurako (Mitxelena 1958: 673).

Ikuspegi kulturaletik aipagarri dateke Zubietako lekukotasuna, bertan ondokoa jasotzen baita: «Y las mugeres del dicho lugar, suelen tener huso y costumbre de llebar las candelas, como que lleban sobre fuesas, aynales, llamadas en bascuençe *escu arguiçaguiac*».

*deus*

Ezezko polaritatea duten izenordainen artean, *deus* da testu nafarretan agertzen dena, Iparraldekoetan bezala. Hala erabiltzen da Beriainen eta Elizalderen obretan eta beste testu laburretan. Ez dugu *ezer* aurkitu 1745 aurretik. Beranduago, Mendiburuk ezer erabiltzen du, *deus*-ekin batera, baina Lizarraga Elkanokoak beti deus dakar.

*egun* 'gaur'

Nafarroako testu arkaiko eta zaharretan *egun* hitzak bi adiera ditu. Batzuetan gazt. *día* esanahiarekin erabiltzen da eta hortik eratortzen dira, besteak beste, *egunorosco* 'eguneroko' modukoak. Beste zenbait kasutan, ordea, esanahi arkaikoa du eta 'gaurko eguna' esateko erabiltzen da. 1745 baino lehenagoko testuetan ez da *gaur* agertzen.

*erdetsi*

'Lortu', 'eskuratu' edo 'harrapatu' esanahiarekin, goi-nafarreraren eremu osoan *erdetsi* / *erdetxi* lekukotzen da XVI. mendeaz geroztik. Hala dute, besteak beste, Beriainek eta Elizaldek.

*erroi*

'Bele' esanahiarekin, *erroi* hitza behin eta berriz agertzen da Nafarroako prozesuetan. XIII. menderako lekukotzen da *erroi* Nafarroan *erroytegi* eta *herroytegi* toponimoetan (Arzamendi 1985). Bonapartek Aezkoan, Erronkaribarren eta Zaraitzun ere jaso zuen (Mitxelena 1958: 675).

*fite*

Hitz hau arrunta da Iparraldeko hizkeretan eta Nafarroan, 'laster, segituan' esanahiarekin erabiltzen da. Nafarroako testu zaharrenetan, hegoaldekoetan bakarrik ageri da: hain zuzen ere, Beriainek, Elizaldek, 1729ko sermoiak eta Obanosko bertsoek dute. Beriainek, gainera, *fitetcena* eta *fiteago* ere baditu. XVIII. mendetik aurrera iparraldeko goi-nafarreraz ere bada: besteak beste, Mendiburuk maiz erabiltzen du

*fite*. Interesgarri da, dena den, Mendiburuk *laster ta fite* eta *laster edo fite* egiturak erabiltzen dituela askotan.

Antzeko esanahia bide du orokorragoa den *bereala*-k. Nafarreraz ere maiz lekukotzen da; Beriainez gain, mende bereko Miguel Elizalderen eta honen izebaren arteko gutunetan agertzen da. Toponimian, Jimeno Juríok (2010) *Buztazuriko erreka pasatu eta berala* toponimoa dakar Zizur zendean.

*iduki* 'eduki'

Gutxienez, Nafarroako hegoaldean Beriainek, Frantzisko Elizaldek eta 1729ko sermoiak *iduqui* aldaera erabiltzen dute, eta erdialderago 1743ko sermoian ere *iduqui* ageri da. Testu berriagoetan ere aldaera hau da nagusi; hala dute Lizarraga Elkanokoak, Mendiburuk, Mikelestorenak eta Urizko eta Elizondoko dotrinek. Testu zaharretan *eduqui* duen adibide bakarra aurkitu dugu; hain zuzen ere, Eugiko 1565eko esaldi batean *Eduqui nahi dituc heure hiçac?* lekukotzen da.

*komekatu*

'Jauna hartu' esan nahi duen hitz hau Nafarroan bakarrik lekukotzen da testu zaharrak ditugunetik. Beriainek dagoeneko XVII. mendean erabiltzen du eta, ondoren, Elizalderen dotrinan, 1729ko sermoian eta Lizarragaren lanetan agertzen da. Hitz horretatik eratorria, *exkomekatu* erabiltzen dute Beriainek eta Leitzako apaizaren kontrako agindua idatzi zuenak.

*mantenatu*

Nafarroako testu arkaiko eta zaharretan agertzen den aldaera da *mantenatu*. Aditz hori lekukotzen den bakoitzeko erabiltzen da aldaera hori: ezkontza fedeetan, esaldietan, Beriainen dotrinan, Elizalderen 1609ko olerki sarituan. Iparraldeko testuetan ere erabiltzen da *mantenatu* aldaera.

*ortzi* 'ehortzi'

Nafarroaren mugak gainditzen ez dituen aldaera bide da *ortzi* (< *e(h)ortzi*). Aldaera hau erabiltzen dute Amenduxek, Beriainek, Zannettik, Elizalderen dotrinak, Mendiburuk eta Lizarraga Elkanokoak. Aresoko otoitz zaharretan aditz beraren aldaera bide den *ostu* agertzen da behin.

*podore*

Dirudienez, *o-e* > *o-o* bilakabide fonologikoarekin loturik dago *podore* (< gazt. *poder*) aldaera. Testu nafar zaharretan aurkitu dugun aldaera bakarra da. Hitz honetan aipagarria ez da bokal aldaketa bakarrik; hitz hasierako herskari ahoskabeak eta bokalarteko ahostunak mailegua berria dela iradokitzen dute.

*sinestatu*

Goi-nafarrerak hiztegian duen aldaera nabarmenetarik da *sinestatu*. Autore eta idazle zaharrenek hala erabiltzen dute, besteak beste Zannettik, XVII. mende hasie-

rako katixima zatiek, Beriainek eta Elizaldek. 1745 aurretik ez da *sinestu* edo *sinesten* modutik ageri, baina Lizarraga Elkanokoak *sinetsi*, *sinestu* eta *sinestatu* hirurak erabiltzen ditu. XVI. menderako, ordea, bada *sinistatu* aldaera; hain zuzen ere, mende haren akabuko diren Aresoko otoitz zaharretan *sinestacen* eta *sinistacen* bietarik dugu. *OEH*n (s.v. *sinestatu*) esaten denez, *sinistatu* aldaera Larraungoa eta Gipuzkoan hitz egiten den nafarrerazkoa da. Aresoko lekukotasun hori, beraz, koherentea da eremuarekin. Bidenabar, Gipuzkoarekin muga egiten duen Nafarroako eskualderen batekoa den XVIII. mendeko dotrina orain arte ezezagunean ere *siñistetu* daukagu (Reguero prestatzen-1).

### *3.4.2.2. Goi-nafarrera zaharra banatzen duten zenbait hitz eta aldaerak*

*aitzin / a(i)ltzin*

Dirudienez, *aurre* orokorra izan da euskararen historian, eta Nafarroako hizkera zaharretan ere maiz agertzen da. Besteak beste, Beriainek *aurre* usu darabil. Dena den, horren sinonimotzat *aitzin / a(i)ltzin* daude.

Hain zuzen ere, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean hiru aldaerak idoro ditugu. Beriainek meza entzuteko tratatuan *aytzina* erabiltzen du, baina dotrinan *aylcina* dakar. Elizaldek ere *ailcinean* aldaera berbera dakar. Aldiz, 1729ko sermoian *alcina*, *alcineraco* aldaera ageri da.

Mitxelenak (*FHV*: § 17.9) azaltzen duenez, *-l-* ondoko *-n*-aren eraginez azaldu da; beraz, forma zahartzat *aitzin* har dezakegu. Dena den, *-l*-dun formak aski zaharrak dira: XIV. mendeko toponimo batean, dagoeneko, *baratzealzinea* daukagu (Salaberri 2015a).

*aingeru / aingiru*

Testu nafar zaharretan *aingeru* eta *aingiru* bi aldaera aurki daitezke. Dena den, azken aldaera hori hegoaldeko goi-nafarreraz bakarrik aurkitu dugu. Zehazki esateko, XVIII. mendetik aurrera 1729ko sermoian eta Elizalderen 1735eko dotrinan ediren dugu. Testu berriagoetan, Bonaparteren ondareko Urizko dotrinan eta Lizarraga Elkanokoaren lanetan *aingiru* dago, baina azken autore horrek *aingeru* ere badakar. Lehenago, Beriainek *aingeru* dakar beti. Toponimian, *Ainguirua* etxe izena agertzen da Itza zendeako Larunben, 1581ean.[1287]

*anitz / aunitz*

Goi-nafarrerazko testu zaharretan XVII. mendeaz geroztik *anitz* eta *aunitz* ageri dira, baina ez da erraza bien artean banaketa geografikoa egitea. *Anitz* dago, besteak beste, Bortzirietako Joseph Elizalderen gutunetan, Frantzisko Elizalderen 1735eko dotrinan eta Obanosko 1744 inguruko bertsoetan. Mikelestorenak eta Mendiburuk ere *anitz* dakarte; Beriainek inoiz *aniz* badakar ere, *auniz* da nagusi utergarraren obretan. Lizarraga Elkanokoak ere bietarik du.

---

1287 Larunbe (Gulibar), 1581, M. Ureta, Hiriberri Arakilgo protokoloak, 4.

*burdina/burni/burrin*

Testu nafar zaharretan 'burdin' esateko hiru aldaera aurkitu ditugu. *Burdin* / *burdiñ* agertzen da iparraldean, Berako olagizonaren gutunetan. Aldiz, *burni* darabilte Beriainek eta Isastiren bi errefrauk. Azkenik, *Burriña* agertzen da XVII. mendeko euskarazko erromantze batean. Lizarraga Elkanokoak azken aldaera hori darabil.

Echaidek (1989: 26) egindako galdeketetan *burriña*, *burdina* eta *burnia* hiru aldaerak jaso zituen. Lehena Erroibarren eta Jaurrietan bakarrik, *burdina* Aezkoan, Esteribarren eta Baztanen, eta *burnia* Iruñetik hasi eta ipar-mendebaldera: Anuen, Ultzaman, Atetzen, Imotzen, Basaburu Nagusian, Larraunen, Atetzen, Sakanan, Bertizaranan eta Bortzirietan. Bonapartek (Mitxelena 1958: 669) *burdin* dakar Aezkoan, baina *burña* Zaraitzun[1288] eta Erronkaribarren.

*eguzki/iguzki*

Bestalde, Mitxelenak (*FHV*: § 2.5) erakusten duenez, *e-* > *i-* egiten da hitz hasieran, kontsonante aurretik, baldin hurrengo bokala itxia bada (ik. § 3.1.1.1). Horren adibide nabarmenetarik izan daiteke *eguzkia* > *iguzquia*. *OEH*ren arabera (s.v. *eguzki*), Nafarroan Lizarragaren lanak agertu bitartean *iguzkia* erabiltzen da; izan ere, Mendiburuk eta Lizarraga Elkanokoak *eguzki* erabiltzen dute. Lehenago, ordea, *iguzki* dugu Elizalderen dotrinan, Felipe IV.aren omenezko bertsoan eta Obanosko bertsoetan. Dena dela, *OEH*k dioenaren kontrara, ez da Lizarraga Elkanokoa *eguzqui* aldaera erabiltzen lehena; 1745 aurretik *eguzqui*, behin bada ere, 1743ko bigarren sermoian agertzen da. XIX. mendean, Bonapartek *iruzki* jaso zuen Aezkoan eta *iguzki* Zaraitzun eta Erronkaribarren (Mitxelena 1958: 667).

*erran / esan*

Nafarroan, oro har, ekialde zabaleko aldaera den *erran* erabiltzen da, eta hala ageri da 1745 aurreko lekukotasunetan ere. Halere, aldaera hori ez da erabiltzen Nafarroako ipar-mendebaldean. Araitz-Beteluko Intzako 1610eko lekukotasun batean *esaten* agertzen da, Leitzan ere 1626an idatzitako dokumentuan *essaten* dugu eta *esan* & *esango* agertzen da Joseph Elizalderen 1693ko gutunetan.

Banaketak, beraz, nahiko garbia dirudi. Nafarroan eremu handienean *erran* badugu ere, Gipuzkoarekin muga egiten duten ipar-mendebaldeko eskualdeetan *esan* dugu.

*erreina / erregia / erregina*

Latinezko *regina* hitzak euskaraz jasan dituen bilakabideen ondorioz, hiru aldaera ditugu: *erreina*, *erregia* eta *erregina*. Dirudienez, zaharrena *erregia* da; alegia, protesia eransteaz gain, bokal arteko *-n-* galdu du. Berriagoa dirudi *erregina* aldaerak; beste

[1288] Toponimian, ordea, *burdin* agertzen da Otsagabian, 1688an: «una pieza sita en las Corseras (...), en el puesto nombrado Ynchaustoia Yntitulada **Burdin Ordoquia**, que se alla sobre el camino del dicho Ynchustoia afrontada con heredades de las cassas de Gorriola Salaberri y de Juanes Zoco.» (Otsagabia, 1688, NAN, P. Vicent, Zaraitzuko protokoloak, 13, 21). Patxi Salaberri Zaratiegiri zor diot honen ezagutza.

zenbait kasutan gertatu bezala, bokal arteko sudurkaria galdu ondotik, eta inguruko bokalen sudurkaritasuna desagertu baino lehen, berriro sortu da kontsonante sudurkaria (*FHV* § 15.4). Azkenik, aldaera berriena *erreina* da, itxuraz gaztelaniazko *reina* mailegatu eta protesia jarririk.

*Erregia*, aldaera zaharrena, XVI. mende akabuko Aresoko otoitzetan eta Beriainen lanetan agertzen da, Arabako Lazarragaren eta Landuccioren idatzietan bezala. *Erregina* behin bakarrik aurkitu dugu testu nafar zaharretan, hain zuzen ere, Orreagako amari 1619an idatzitako bertsoetan. *Erreina* aldaera autore bakar batek erabiltzen du: Elizaldek 1735eko dotrinan.

*eskui/eskuin*

'Eskuin' adiera duen *eskui* da testu nafar zaharretan gehien ageri den aldaera. Besteak beste, Aresoko otoitz zaharretan, Beriainen obretan eta Elizalderen dotrinan aldaera hori lekukotzen da, geroagoko Lizarraga Elkanokoaren lanetan bezala. 1729ko sermoian ere *escuian* dago, eta Ondarrak (1981) dakarren *escuilco escuieco* izan daiteke. Gainerakoan, bi aldiz bakarrik aurkitu dugu *eskuin* aldaera: Zannettiren kredoan eta XVII. mende hasierako katiximaren zatietan *escuñean* dago. Lekukotasun berriagoetan, batez ere XX. mendekoetan, *eskuin* maizago agertzen da.

*etxe/itxe*

Testu nafarretan *etxe* orokorraren ondoan *itxe* ere ageri da. Zehazki esateko, *itxe* agertzen da Nafarroako erdigunekoa bide den 1743ko sermoian eta mende berean iparralderagoko Irungo udal agiritegiko euskarazko testuetan.

*gendu/kendu*

1745 aurreko testuetan *kendu* aldaera bi testutan bakarrik aurkitu dugu, hain zuzen ere, 1729ko sermoian eta Elizalderen 1735eko dotrinan. Aldiz, *gendu* aldaera ahostunduna gehiago ediren dugu. Besteak beste, Beriainek aldaera hori darabil eta 1743ko sermoietan ere hala ageri da.

*guti/gutxi*

'Gutxi' esateko bi aldaera aurkitu ditugu Nafarroako testu zaharrenetan: *guti*, *gutxi*. Naski, *guti* da gehien ageri dena; beste lekukotasun ugarien artean, Beriainek eta Elizaldek aldaera hori dute. Aitzitik, oso urriak dira *gutxi* aldaeraren lekukotasunak, bi baizik ez baitigu aurkitu: Joseph Elizalderen gutunean *guchibana* ageri da, eta *guchi* dago Isastiren errefrauetako batean, biak goi-nafarreraren iparraldeko lekukotasunak. 1743ko bi sermoietan, irudiz, *guiti*, *guitivana*, *guitiago* horietan <it> grafiak sabaikaria islatzen bide du.

*igo/igan*

1745 aurreko testu nafarretan *igan* da gehien lekukotzen den aldaera. Beriainek eta Elizaldek aldaera hori erabiltzeaz gain, hala agertzen da Aresoko otoitz zaharretan eta gugana osorik heldu ez den katiximan. Testu berriagoetan ere *igan* dute Lizarra-

gak, Mendiburuk, Mikelestorenak eta Elizondoko eta Urizko dotrinek besteak beste. Dena den, Nafarroan *igo* ez da ezezaguna. Mendiburuk inoiz erabiltzen du, eta lehenago *igo* dugu Aresoko otoitzetan. Echaideren (1989: 280-281) galdeketan ikus dezakegunez, ekialdea eta erdialdea mendebaldetik bereizten dituen isoglosa dago; lerroaren ezker geratzen dira, batez ere, Larraun, Araitz eta Sakana, eta eskuinean Baztan, Zaraitzu, Aezkoa, Esteribar, Anue eta Ultzama (nahiz eta batzuetan *igan* > *i(g)en* egin den).

*inor/ihor/nior*

Inoizko **e-nor* batetik eratorritako izenordainaren hiru aldaera aurki daitezke Nafarroako testu zaharretan, baina banaketa geografiko garbia dutela dirudi. Hegoaldeko goi-nafarrerazko lekukotasunetan *i(h)or* agertzen da, Zaraitzun eta Erronkaribarren bezala. Nafarroa Garaiko erdialde-iparraldean, aldiz, *nior* erabiltzen da, Lapurdin eta Nafarroa Beherean bezala. Nafarreraz mintzo den Gipuzkoako Irunen, aldiz, *inor* ageri da.

*jende*

Hitza orokorra bada ere, hegoaldeko goi-nafarrerazko hizkera batzuetan hitz elkartuko bigarren osagai bezala ageri da izenari loturik. *OEH*ri (s.v. *jende*) jarraituz *jende* dela proposatu dugun arren, ohartarazi behar dugu hitz hasierako kontsonantea herskari ahoskabe belarra dela, <gu> grafiak islatzen duenez. Bestalde, hasierako esanahia galdu du, eta '-ki' atzizkiaren pareko adiera du; alegia, zerbaitez egindako produktu edo jakia.

1745 aurretik lekukotasun bakar batean aurkitu dugu: 1729ko sermoian: *abeguende* 'hegazti', *liguguende* 'lihoki, lihoarekin egindako zerbait' eta *esneguende* 'esneki'. Ondoko testuetan Lizarraga Elkanokoak badu laginik: *abegende*, *gizagende*, *haragigende*, *kristiogende*, *zurgendea*. Aezkoan ere *arrai guendeic* dakar XIX. mende hasierako dotrina batek (Camino & Gómez 1992).

*oren/oron – ordu*

Nafarroako eskualde gehienean *o-e* > *o-o* aldaketa gertatu da zenbait hitzetan, arestian ikusitako *podore* kasu. Bilakabide horren beste adibidea da *oron* hitza, eta ia Nafarroa osoa hartzen du: 1659an *oronac* agertzen da Lesakako esaldi batean, baina lehenago Beriainek ere *horon* erabiltzen du, eta 1729ko sermoian *oron* dago. Lehenago inoiz edo behin *ordu* erabiltzen da: Beriainek bi aldiz eta Elizaldek dotrinan behin bakarrik du. Dirudienez, testu berriagoetan *ordu* hitza gehiagotan erabiltzen da. Lizarraga Elkanokoak, esaterako, ia beti du *ordu*, eta behin aurkitu dugu *oron*. Caminok (2015: 37) erakusten digunez, Nafarroa Behereko eskualde batzuetan eta Zuberoako mendebaldeko herrietan ere *oron* agertzen da; Luzaiden, aldiz, *oren* jasotzen dute Kaminok eta Salaberrik (2007).

*Zenbakiak emateko moldeak*

Ezagun denez, hizkerak bereiz daitezke zenbakiak, batez ere, hirurogeitik eta ehundik gorakoak emateko moldearen arabera.

Nafarroako testu zaharrei begiratzen badiegu, oro har, erdialde-mendebaldeko egitura erabiltzen dela ikus dezakegu: *iruroguey eta amavi* (ZalbGut), *borz milla eta lauroguey eta emereci* (Ber*Meza*), *irurogeita vederezi*, *iruroguei eta amazei* (Irun, 1721).

Dena den, Bortzirietan ditugun lekukotasunetan bestelako egitura dugu: *lauretan oguei eta emerezi* (JElGut), *lauetan oguey eta lau* (BeraGut). Bestalde, 'berrehun' adierazteko txandaketa dugu *virreun zorzi* (JElGut) eta *bi eun* (BeraGut). Halaber, txandaketa ageri da Basaburu Txikian; izan ere, Leitzako apaizaren aurkako idatzian bietarik dugu: *berroguey eta amalau*, *verroguei eta amar*, *verreun*, baina *borzetan eun* (LeitzApez).

Egungo datuetan oinarriturik, Apalauzak (2012: 465) erakusten du Nafarroako ipar-mendebaldean dagoela isoglosa. Araitz-Betelutik mendebaldera *ogeita-* modukoak ditugu, baina gainerakoan *-etan ogei* modukoak.

# IV
# GOI-NAFARRERAREN SAILKAPENAZ ETA PERIODIZAZIOAZ

Dialekto baten deskribapen sinkronikotik haratago, interes handiko gaia da bere bilakabidea ezagutzea hizkuntzaren beraren nondik norakoa ezagutzeko. Duela gutxira arte, Mitxelenak egindako zenbait lan salbu, ez dira asko izan, gure artean, dialektologia ikusmolde diakronikotik begiratu dutenak. Azken urteetan, aitzitik, Caminok (2008b) finkatutako oinarriei jarraituz, Caminok berak (2008a, 2011a, 2011b, 2013) lan ezin interesgarriagoak egin ditu hizkuntza ezaugarrien bilakabideen kronologia ardatz harturik, Benvenisteren aldarriaren bidetik. Lakarrak (2011) ere gogoeta iradokigarri eta oinarri teoriko sendoak finkatu ditu Mitxelenak (1981) markatutako bideari segi eta Euskara Batu Zaharrari hizkuntzazko justifikazioa eman nahian. Ez hori bakarrik. Inguruko eta urrunagoko hizkuntzalaritzetan ohi denez, aldarrikatu du euskararen kasuan ere zuhaitz genealogikoak bitarra behar duela izan, eta ez 6, 8 edo 12 adar dituen adabegi bakarreko zuhaitza (Lakarra 2011: 203). Zalantzarik ez da, beraz, euskalkien azterketa egitean dialektologia diakronikoa oinarri hartzeko tresnarik eta abiabururik badela.

Goi-nafarreraren bilakabidea argitze aldera, pentsatzen dugu 3. atalean egindako azterketatik hainbat ondorio atera daitezkeela eta ikerketa berriei atea ireki diezaiekeela. Lanak luzeegi jo ez dezan, hemen azalduko ditugun ondorioak bi puntutan bilduko ditugu. Batetik, zenbait ohar egingo ditugu goi-nafarreraren sailkapenaz eta bilakabideaz (§ 4.1) eta, bestetik, goi-nafarreraren periodizazio baterako proposamena egingo dugu (§ 4.2).

## 4.1. GOI-NAFARRERAREN SAILKAPENAZ ETA BILAKABIDEAZ GOGOETAK

Bonapartek (1869: 226) euskalkien sailkapena egin zuenean, hiru multzotan bildu zituen euskalkiak: A multzoan bizkaiera sartu zuen —Gipuzkoako mendebaldeko hizkerak barne—, B multzoan lapurtera, gipuzkera eta ipar eta hegoaldeko goi-nafarrerak bildu zituen eta, azkenik, C multzoan zuberera —erronkariera barne— eta ekialdeko eta mendebaldeko behe-nafarrerak —zaraitzuera eta aezkera barne— batu zituen. Sailkapen hartan goi-nafarrerak duen kokaguneari begiratzen badiogu, ez dago zalantzarik: hegoaldeko eta iparraldeko goi-nafarrerak erdialdeko hizkeratzat hartu zituen Bonapartek.

Bonapartek mapa eta aditzen taula osatu baino askozaz lehenagokoa da XVI-XVIII. mendeetan mintzatu zen goi-nafarrera, baina, haatik, erdiguneko dialektoa zen orduan ere. Beraz, goi-nafarrera arkaiko eta zaharra ikergaitzat hartzean berezitasun

hori oso kontuan izan behar dugu: Nafarroa euskararen eremuaren erdigunean dago eta, hain zuzen ere, horregatik inguruan dialekto eta hizkera gehiago ditu.

> Erdigunean egoteak inguruko dialektoetan ere eragina izan lezakeenez, usu zail da demagun gipuzkerak edo lapurterak duten ezaugarria goi-nafarreraren eraginez hartu duten ala hirurek lehenagoko aitzinhizkuntza edo aitzindialektotik hartu duten. Testuen urritasunak zailago egiten du hizkuntza-ezaugarri horren bilakabidea ezagutzen. Bestetik, ezin atzendu da, hizkera hau geografikoki guztiz erdialdekoa dela eta erdialdeko hizkerak, usu eragin lektal anitzen menpe egoten direla; eremuotan neke izaten da dialektoak bereiztea: hizkuntza-ezaugarriak, nahaska, gorde-ezkutuka edo jauzika bezala ageri zaizkigu, ez erarik koherenteenean bateraturik. Hizkuntza-ezaugarri batzuk hemen hasten dira, ezaugarri hauetarik batzuk horragoxe bukatzen, tartean beste berri batzuk sortzen zaizkigu, besteren bat desagertzen zaigu: hizkuntza-ezaugarrien konbinazio gehiegi eta zinez konplexuak ageri dira gure begien aitzinean: eremuak elkargainka jartzen zaizkigu. (Camino 2003b: xiv)

Euskal Herriaren erdigunean hitz egiten den dialektoa izanik, euskalki askorekin egin izan du eta egiten du muga: mendebaldean Gipuzkoako eta Arabako euskarak ditu, iparraldean nafar-lapurtera eta ekialdean zaraitzuera eta erronkariera. Bestela esanda, zuberera eta bizkaiera dira zuzenean goi-nafarrerarekin muga egiten ez duten euskalkiak.[1289] Bonapartek (1869: 226) ondorioztatu zuen Nafarroan euskalki beregaina hitz egiteaz gain, gainerako euskalki guztiak hitz egiten zirela bertan, bizkaiera salbu.

Dialektologo eta hizkuntzalarien artean uste onartua da erdiguneko dialektoak ertzetakoak baino berritzaileagoak izan ohi direla; aldiz, muturretako dialektoek arkaismoak mantentzeko joera handiagoa dute (Camino 2009: 173-177). Iritzi horretatik aurreikus dezakegunaren arabera, Euskal Herriaren erdiguneko mintzoek —gipuzkerak, lapurterak, goi-nafarrerak eta, beharbada, behe-nafarrerak— ertzetara heldu ez diren berrikuntzak izan beharko lituzkete.

Goi-nafarrera arkaiko eta zaharrean agertzen diren ezaugarriak aztertzean zenbait ondorio laburbildu ditugu (ik. § 3.1.4, § 3.2.3 eta § 3.3.8). Bertan ikusi ditugun berrikuntza zaharrenek goi-nafarreraren eremua gainditzen dute eta beste dialektoekin bateratzen da goi-nafarrera; aitzitik, goi-nafarrerarenak diren ezaugarri esklusiboak, gutxi izateaz landara, berriagoak dira, eta gehienak XVIII. mendetik aurrera hedatzen dira.

Bestalde, badirudi goi-nafarrera aitzindari izan dela gerora ia orokortu diren euskararen ezaugarri zaharrak galtzen. Galdu dituen ezaugarri horien artean daude, besteak beste, bokal sudurkariak, bokal bikoitzak, hasperena, aoristoa eta **iron* laguntzailea.

Oro har, galera horiek nekez balio digute dialektoak adabegi beretik eratortzeko edo beren arteko batasun estua defendatzeko. Aitzitik, komunean dituzten berrikuntza positiboak, hau da, goi-nafarrerak eta erdiguneko dialektoek batera egin dituzten berrikuntza positiboak dira benetan balio digutenak.

---

[1289] Iñaki Caminok jakinarazi didanez, berez, Aezkoak eta Zuberoak muga zuten Orbaizetako Zabaleta izeneko alderdian; gero hori La Cuestión izendatu da, eztabaidagai izan delako, zaraitzuarrek hartu eta aetzek galdu zuten, baina iraganean Aezkoak eta Zuberoak hor muga geografikoa zuten.

Fonologiaren ezaugarrien ondorioetan (§ 3.1.4) ikusi ditugun 17 ezaugarrietatik 11 XVI. menderako gertatu dira: (2) *e_u* > *i_u* (*iduki*, *iguzki*…), (5) *eu* > *e* (*nere*, *gere*, *zere*), (6) *oa-* > *goa-*, (7) *aho* > *ao* > *ago*, (9) *ae* > *e* (*apez*, *hameka*), (10) sinkopak, (12) **-ani* > *-ain*, (13) **enor* > *ior* > *nior*, (14) *-on* bukaera mantentzea, (15) **j* > [ʃ] eta (17) *-rtz-* > *-st-*. Horretaz gain, goi-nafarreraz landa, Gipuzkoako edo Lapurdiko hizkerek partekatzen dituzte horietatik gehienak (5, 8, 10, 11, 12, 13,15, 16 eta 17). Areago, bi bakarrik dira, goi-nafarreraren ezaugarri esklusiboak: (6) *oa-* > *goa-* eta (14) *-on* bukaera gaztelaniazko maileguetan.

Antzekoa da egoera morfologiari dagokionez, 25etik 13 inguru dira goi-nafarreraz bakarrik edo nagusiki bertan aurki daitezkeen ezaugarriak: (1) *o(h)ec* > *obec* / *ebec*, (2) erakusleetan *g-*, (3) *gueuren* genitibo pleonastikoa, (6) instrumentalean *-s*, (17) **erazan* aditz laguntzailea, (18) *-zki-* → *-it-* aldaketa *-i(n)-* erroaren pluraleko adizkietan, (20) *-it-* → *-zki-* egitea **ezan* aditzaren adizkietan, (22) **ezan* + *ke* → **edun* + *ke* aldaketa indikatiboaz landako NOR-NORK sailean, (24) hikako adizkietan *-t* egitea eta (25) *-itz-* > *-etx-* bilakabidea **ezan*-en adizkietan. Gainera, 3.3 taulan ikusi dugunez, ezaugarri horietako asko ez dira orokorrak (1, 2, 3, 9, 16, 17, 18, 22, 24 eta 25). Aldiz, berrikuntza zaharrenak Lapurdin eta Nafarroa Beherean edo Gipuzkoan ere ageri dira (4, 5, 7, 8, 9, 10, 11, 12, 14, 15, 16, 19, 21 eta 23). Dena den, aurreraxeago (§ 4.1.1 eta § 4.1.2) sakonago aztertuko ditugu erdigunean eta goi-nafarreraren eremuan sortu edo bertatik hedatu diren ezaugarriak.

Arestian aipatu dugun Bonaparteren 1869ko sailkapenaz geroztik, iparraldeko eta hegoaldeko goi-nafarrerak bi dialekto beregaintzat hartu izan dira. Edonola ere, Caminok (2003a, 2003b) biak euskalki bakartzat hartzeko aski arrazoi eman ditu, nahiz eta «hego-nafarrera delako hori, izatez badela erakuts dezaketen tasun definitzaile horiek badaudela» frogatzen duen (2003b: 54).

Hegoaldeko goi-nafarrerazko testu zaharrenak aztertu ostean, Caminoren proposamena baieztatzeaz landara, azpimarra daiteke bi azpidialektoak bereizten dituzten ezaugarriak XVIII. mendearen erdialdetik aurrera garatu zirela batez ere. Jarraian ikusiko dugunez, lehenago badira bien arteko banaketa eragiten duten ezaugarriak, baina denborak aurrera egin ahala tasun horiek ugaritu egin dira.

XVII. menderako hegoaldeko goi-nafarreraz mintza gaitezkeela dirudi, eta horren lekuko dira 1609ko olerki sarituak edo Beriainen lanak. Dagoeneko testu horietan badira iparralderagoko testuetarik bereizten diren ezaugarriak. Esate baterako, mende horretan ongi lekukotzen dira hegoaldeko mintzoen ezaugarri diren *arracio* 'arrazoi' aldaera, adizkietan iraganeko bukaerako *-n* galtzea edo soziatiboan *-reki* aldaera erabiltzea. Bestalde, dagoeneko Beriainen 1621eko liburuan *ciroquetat* 'zezakeat' agertzen da, eta adizki horretan hegoaldeko zenbait mintzok duten alokutiboko maskulinoko *-t* morfema aurkitzen dugu.

Dena den, iparraldeko eta hegoaldeko hizkerak bereizten dituzten ezaugarri nagusiak XVIII. mendearen erdialdetik aurrera ageri dira. Ikus ditzagun batzuk:

*Argumentum ex silentio* direlakoek baieztapen sendorik egiteko balio ez duten arren —are gutxiago testu gutxi edo bat ere ez dugun garaietarako—, merezi du 1750 baino lehen agertzen ez diren hegoaldeko goi-nafarreraren ustezko ezaugarriak aipatzea, batzuk behintzat. Esate baterako, Nafarroako Ollarango hizkeretan ohikoa da *ei* > *ai* bilakabidea gertatzea (Camino 2003b: 126). Testu zaharretan ez

da bilakabidearen arrastorik ageri, nahiz eta Ollarango lekukotasunak oso urriak izan. Halere, Ollarandik kanpoko lekukotasun zaharretan, beti dugu *bein* eta *deicen*. Aldiz, XVIII. mendeko bigarren erdialdekoa den Muruzabalgo sermoi datatu gabe batean *bain* 'behin' dago (Satrustegi 1987: 71), eta multzo berean agertutako 1751ko beste sermoi batean *daicen* 'deitzen' ageri da (Satrustegi 1987: 83-84). Aurrekoarekin batera, Goñerrin ageri den *ai* > *ei* bilakabidearen lehen aztarnak mendearen bigarren erdialdetik aurrera ditugu (ik. Camino 2003b: 132): *orei* 'orai(n)' dugu arestian aipatutako sermoi data gabe horretan, eta *beite*, *gueiec* 'haiek', *orei* 1751koan.[1290] Era berean, 1751ko sermoi berean, eta ez lehenago, aurkitu dugu Caminok (2003b: 66) hegoaldeko goi-nafarreraren ezaugarri bere-berezkotzat duen *eu* > *au* bilakabidearen lehen aztarna: bertan agertzen dira *naurria*, *zauri* eta *gauren*.

Ezaugarrien errepaso labur honekin amaitzeko, aipagarri dirudi iparraldeko goi-nafarrerazko hizkera batzuetako aditzetan gertatzen den *-itz-* > *-etx-* bilakabide fonologikoak. XVIII. mendearen erdialdetik aurrera gertatzen da; hala lekukotzen da behinik behin. 1750 aurretik, *dechetela* 'ditzatela' ditugu 1748ko sermoian,[1291] eta *dechoquena* 'diezazkiokeena' 1743koan.

Laburki bada ere, ikusi ditugun ezaugarrien bilakabideak Caminok (2003a eta 2003b) egindako proposamena baieztatu besterik ez du egiten; areago, esan genezake iparraldeko eta hegoaldeko goi-nafarreraren arteko bereizketa oso berria dela eta batez ere XVIII. mendearen erdialdetik aurrera areagotzen dela bereizketa. Ez da urrun, beraz, nahiz eta historiaurrean izan, bien aitzindari datekeen aitzin-goi-nafarrera.

Bestalde, ezaugarri batzuetan ikus daitekeenez, Baztan-Bidasoaldean nolabaiteko batasun linguistikoa dago. Bertan agertzen diren ezaugarri batzuek Lapurdiko mintzoekin duen batasuna islatzen dute, hala nola *-zione* eta *-ain* bukaerek (ik. 8. eta 9. mapak), edo *oren* mantentzeak eta ez egitea Nafarroan nagusitu den *oron* aldaera. Halaber, bertan bakarrik aurkitu ditugu *equen* 'haien' eta *oquen* 'hauen' moduko erakusleen genitiboak (§ 3.2.1.3). Irunen eta Bortzirietan bakarrik dago *-uB* > *-ubB* bilakabidea (§ 3.1.1.4), eta *-zki-* > *-it-* (§ 3.2.2.2.12) bilakabidea beste inon baino lehenago gertatu da Bortzirietan.

Berriro ere Bonapartek egindako hiru multzoen banaketara itzuliz, interesgarri dirudi, bereizitako multzoek hizkuntza ezaugarrien justifikaziorik balute, azalpen diakroniko bat ematea eta balizko zuhaitz genealogiko bitarrean (ik. Camino 2008, Lakarra 2011) multzo bakoitza non koka daitekeen zehaztea: AB-C / A-BC. Alegia, C multzoa izan zen lehenik bereizi zena AB-gandik ala, aitzitik, A izan zen BC-gandik bereizi zena? Ez bide du zentzurik proposatzeak bereizi zen lehena B izan zela eta AC-k multzo bat osatu zutela, iragazki geografikoa ez bailuke pasatuko; cf. orain Camino (2011) eta Lakarra (2011) (bestalde, ik. lapurtera eta goi-nafarrera erkatzen dituen azterketa interesgarria: Camino 2013a). Lan honetan nekez eman deza-

---

1290 Iduriz, testu idatzietan mendearen erdialdetik aurrera agertu arren, toponimian lehenago agertzen da: 1722koa da *Seizbidea* 'Saizbidea' toponimoa Gesalatzen (Salaberri Zaratiegi 2017).

1291 Sermoi berean *combertichac* 'konberti itzak' daukagu, eta hor, agidanean, *itz* > *itx* egin da, baina grafia engainagarria izan daiteke.

kegu erantzun behin betikorik, eta zalantzarik gabe etorkizuneko ikerketa gehiagoren beharrean gara.

Bestalde, berriki Lakarrak (2011) Erdiguneko Euskara Zaharra (ErEZ) deitzen duen horretatik eratortzen ditu goi-nafarrera eta lapurtera. Proposamen hori aintzat harturik, 3. atalean ikusi eta aztertutako ezaugarrietatik atera genezakeen ondorio nagusietakoa izan daiteke goi-nafarreraren muga gainditzen duten ezaugarriak ErEZk egin zituen berrikuntzak diratekeela. Horiez landa, erdiguneko mintzoek berrikuntza negatibo asko partekatzen dituzte, hala nola bokal luzeak galtzea, hasperena galtzea (nahiz eta maila berean ez gertatu eremu osoan) eta aoristoa galtzea. Galera horiek erdigunetik kanpo ere gertatu dira, baina, itxuraz, beranduago.

Euskal Herriaren erdigunean egotearen ondorioz, ezaugarri ugarik ukitzen eta zatitzen dute Nafarroa, «alde batetik nahiz bestetik, saihetsetan batez ere» (Camino 2013a: 99). Ondorioz, Euskal Herriko saihetseko diren Bizkaian eta Zuberoan baino hizkuntza-batasun txikiagoa dago Nafarroa Garaian (*ibid.*). Ideia hori hartzen du gogoan Lakarrak (2011: 214) Euskara Batu Zaharraren aitzin-aberriaz mintzo delarik:

> Zuhaitzaren 14 adarrak begiratzen baditugu beren osotasunean, dentsitate geografikoa buruan dugularik, aski garbi dirudi gehienak Nafarroan kokatzen direla (14tik 9; cf. 27. oh.) eta, areago dena, Err, ErdNaf (= L gehi IGN) eta HeMuNa (Hegoalde Muturreko nafarrera) alde batera utziaz ere, bost (Iruñerrikoa, Aezkera, Zaraitzuera eta bi Nafarroa Beherekoak eta sei Err-ekin) Iruñetik Iparraldera lirateke. Ez da antzekorik —lurralde horiek txikiagoak direla kontuan harturik ere— Jaurerrian, Probintzian edo Araban: hots, hauetan banaketa dialektala aise arinagoa dela dirudi, Ekialdeko Nafarroan, Iruñetik ipar, Aturriraino bitartean denaren aldean.

Errealitate hori Campbellek (1998: 352, 2003: 400) egiten duen baieztapenarekin lotzen du. Dirudienez, hizkuntza familia bat zatikatzen denean, hortik sortutako dialektoak zatiketa gertatzen hasi zen eremutik gertu mantentzen ohi dira, eta gutxitan gertatzen da dialektoak eremu hartatik oso urrun joatea. Metodo hori erabili dute afroasiatikoarekin, kutxitikoarekin, hausarekin eta kitxuarekin (cf. Lakarra 2011: 214). Ondorioz, Lakarrak (*ibid.*) ez du baztertzen EBZren «eraikuntza-gunea» eta bere hedaduraren abiapuntua Iruñearen iparraldera egotea. Hala ere, hori baieztatzeko hizkeren banaketa zaharrenak kontuan hartu behar dela dio. Ez du baztertzen, halaber, Ekialdeko Euskara Zaharra (Erronkaribarkoa eta Zuberokoa) EBZ baino lehenagokoa izatea, eta biak delako X batetik erator litezkeela proposatzen du (Lakarra 2011: 217).

Bistan denez, Lakarraren proposamenek mami asko dute eta azterkizun eta gogoeta gai ugari jartzen dituzte mahai gainean. Hemen ezin diegu sortzen diren galdera guztiei erantzunik eman inolaz ere, baina goi-nafarrera arkaiko eta zaharraren azterketa sistematikoak horiek aurkitzen lagun dezakeelakoan gaude.

Testu zaharrek erakusten duten errealitatea ez da berriagoek erakusten duten berbera. Liburu honen 2. atalean aztertu ditugun testuetan ez dugu aurkitu Caminok (2013a: 99) iradokitzen duen Nafarroako batasun linguistiko txikia. Aitzitik, 3. atalean ezaugarrien azterketa egitean ikusi dugunez, dialektalismo gutxi dago Nafarroaren barnean. Denborak aurrera egin ahala, XVIII. mendearen erdialdean lekukotzen dira Nafarroan hitz egiten diren hizkeren arteko aldeak. Lehenago ere izango ziren

hizkera ezberdinak, baina ez dirudi aldeak oso zaharrak eta sakontasun diakroniko handikoak direnik (ik. § 4.1.1).

Goi-nafarreraren[1292] eraketan, Caminok (2013a: 101) proposatzen du Iruñeak hizkuntza-eragina izan zuela hirian euskararen garrantzia ahultzen hasi aurreko garaian. Halaber, Zuazok (2010b), euskalkien jatorriaz aritzean, Iruñea aipatzen du dialektoen sorguneetako eremuetako bat.

Nafarroan ditugun lekukotasun idatziak ez dira nahi genituzkeen bezain zaharrak eta, beraz, erresumako hiriburuak izan zuen balizko eragina ezagutzeko testu berriagoek zer esaten duten ikusi behar da. Ez da aise egiten den lana, ordea. xvi. mendeaz geroztiko testuetan begiraturik, ikus dezakegu Nafarroako erdigunean sortu ziren berrikuntza asko ez direla herrialde osora heldu. Halaber, mendebaldeko berrikuntza ugari sartu da Nafarroara Iruñera eta inguruetara iritsi gabe.

Hori dela eta, jarraian zenbait ezaugarriren kronologia egiten saiatu gara Iruñeak izan lezakeen indarra neurtzeko. Horrela, batetik, euskaraz eremu zabala hartzen duten ezaugarriak aztertuko ditugu (§ 4.1.1) eta, bestetik, eremu murritzagoa hartzen duten ezaugarriak ikusiko ditugu (§ 4.1.2). Guztiak dira 3. atalean ikusitakoak; beraz, ez dugu berriro ezaugarrietan askorik sakonduko.

### 4.1.1. Eremu zabaleko berrikuntza zaharrak

Azpiatal honetan Euskal Herriaren erdigune zabalean hedatzen diren zenbait ezaugarri hartuko ditugu aintzat. Oro har, ezaugarri batek zenbat eta hedadura handiagoa izan, orduan eta zaharragoa izateko aukera handiagoa du. Hortaz, ezaugarri bat Nafarroan, Lapurdin eta Gipuzkoan agertzen bada, Nafarroan bakarrik agertzen diren ezaugarriak baino zaharragoa izango da. Bestalde, uste izatekoa da, antzina Iruñea edo Nafarroako erdigunea foku izan bazen, bertan sortuak izan edo bertatik hedatuak izan daitezkeela erdigunean agertzen diren berrikuntza asko. Beraz, horiek aztertzeak Erdialdeko Euskara Zaharraren eta goi-nafarreraren kronologia egiten lagun dezake.

Hori dela eta, jarraian Nafarroan agertu arren, mugak gainditu eta beste dialekto batzuetan badiren ezaugarri eta bilakabide zaharrak ikusiko ditugu.

#### *4.1.1.1. -a + -a > -a*

Artikuluak *-a* itsasi duten hitzekin elkartzean jasandako bilakabidea desberdina da dialektoen arabera (§ 3.1.1.2). Nafarroa Garai ia osoan —Burundako hizkeran (Erdozia 2001: 486) eta Ameskoa eta Lana ibarretan (Salaberri Zaratiegi 1998: 52-53) eta Nafarroako ekialdeko dialektoetan salbu— *-a + -a > -a* egiten da, Gipuzkoako erdialde-ekialdean, Lapurdin eta Nafarroa Beherean bezala. Zuberoan desberdintasuna azentuan dago *a + a > á*.

[1292] Beharbada orain, kronologia kontuengatik, egokiago da, Lakarraren (2011) proposatutakoaren ildotik, Erdialdeko Euskara Zaharra deitzea.

### *4.1.1.2. Aditz-izenetako* -tze

Urgellek (2006) proposatzen duenez, aditz-izenak osatzeko erabiltzen den *-tze* atzizkia hegoaldeko goi-nafarrerak, lapurterak eta behe-nafarrerak osatzen duten hirukian hedatu zen lehenik. Beriainek *-tze* du egokitzen den guztietan, bi kasu fosildutan izan ezik: *erortera* erabiltzen du, behin tratatuan eta beste behin dotrinan. Axularrek eta Etxeberrik indartsu erabiltzen dute, eta ez horren indartsu Etxeparek. Gipuzkera zaharrean, Otxoa Arinek bokalez eta *-tu-*z amaitzen den aditzekin *-tze* erabiltzen du.

Ikusi dugunez (§ 3.2.2.1.3), goi-nafarreraz ez da falta *-te* duen arkaismorik; dena den, XVI. menderako ongi lekukotzen da *-tze*.

### *4.1.1.3.* -te *pluralgilea*

Euskal Herriaren erdigunean egindako berrikuntza dirudi NOR-NORK eta NOR-NORI-NORK saileko perifrasietako aditz laguntzaileetan ergatiboari dagokion pluralgiletzat *-te* erabiltzea. Ikusi dugunez (§ 3.2.2.2.13), XV-XVI. mendean Nafarroako erdigunean aski errotua dago.

Eremu berritzaile horretatik kanpo dagoke Nafarroako mendebaldea; izan ere, Areson, Intzan eta Olatzagutian *-e* agertzen da. Gainera, *due* dugu XVIII. mendearen bigarren erdiko Nafarroako mendebaldeko dotrina argitaragabean (Reguero prestatzen-1), eta *duen* 'duten' eta *dezen* 'ditzaten' agertzen dira 1772 inguruko Intzako eliza-agindu batean (Satrustegi 1987: 131-133). XV. menderako sortua zen berrikuntza hori; beraz, ez da iritsi Nafarroako mendebaldera, berandura arte bederen.

### *4.1.1.4. Ergatiboko* -ek

Manterolak (2015) erakutsi duenez, Nafarroan, Gipuzkoako ipar-ekialdean eta Iparraldean ergatiboko *-ek* berrikuntza partekatua dago (§ 3.2.1.7).

### *4.1.1.5. Geroaldiko* -en

Geroaldiko formari dagokionez, *-n-*ez bukatzen diren partizipioekin *-en* erabiltzen da Nafarroan eta Lapurdiko, Nafarroa Behereko eta Zuberoako dialektoetan (ik. § 3.2.2.2.9).

### *4.1.1.6. Partizipio pleonastikoak*

Nafarroa osoan eta gipuzkera zaharreko testuetan *izandu*, *egondu* eta antzeko egitura pleonastikoak ohikoak dira. Lapurdiko kostaldean, Materraz geroztik, *izatu* gisakoak ageri dira.

### *4.1.1.7.* *Edun *aditzaren adizkiak*

**Edun*-en adizkiek jasandako bilakabidea ez da berbera Euskal Herri osoan. Nafarroa gehienean,[1293] Gipuzkoako ipar-ekialdean, Lapurdin, Nafarroa Beherean eta

[1293] Artatzako euskarazko testu batean *dau* dator (Salaberri 2004).

Zuberoan **dadu- > dau- > deu- > du-* bilakabidea gertatu da **edun* aditzaren singularreko lehen eta bigarren pertsonetan. Lehen agerraldietatik ditugu *dut*, *duk/n*, *dugu* eta *duzu* gisakoak erdiguneko eremu zabal horretan. Dakigunez, Gipuzkoan *de-* daukagu eta Bizkaian *do-*.

Hirugarren pertsonari dagokionez, *du* daukagu erdiguneko eremu horretan, baina adizkiaren hedadura zabalagoa da, Gipuzkoako zati handiagoa hartzen baitu.

#### *4.1.1.8.* -i(n)- *erroa*

Aipatu dugunez (§ 3.2.2.2.4), *-i(n)-* erroa erdiguneko hizkerek egindako berrikuntzatzat hartzeko arrazoiak ditugu, eta, ikusi dugunez, aditz laguntzaile horren hedadura ezberdina da dialektoaren arabera. Gipuzkerak eta hegoaldeko goi-nafarrerak erabat ordezkatu dute **eradun*, baina iparraldeko goi-nafarrerak, lapurterak eta behenafarrerak *-i(n)-* erroa datiboa erabiltzen dute batzuetan.

### 4.1.2. Eremu murritzagoko berrikuntzak

Jarraian ikusiko ditugun berrikuntzak arestian ikusitakoak baino berriagoak direla dirudi, besteak beste, hedadura murritzagokoak direlako. Haatik, goi-nafarrerazko lekukotasunak agertzen direnerako ezaugarri horiek guztiak daude testuetan.

#### *4.1.2.1. o-e / e-o > o-o*

Ikusi dugunez (§ 3.1.1.1), *o-e / e-o > o-o* bilakabidea jasan duten hitzak gutxi izan arren, goi-nafarrera osoan gertatu da. *Oron* hitza eremu gehienean agertzen den arren, Bortzirietan *oren* daukagu. Aldiz, *podore* Nafarroa osoan agertzen da, baita Bonaparteren ondareko Berako dotrinan ere.

#### *4.1.2.2. oa- > goa-/gwa-*

Lekukotasun urriak izan arren, goi-nafarreraren eremu zabalean agertzen da *oa- > goa-/gwa* bilakabidea (§ 3.1.1.4).

#### *4.1.2.3.* -on *bukaera*

Goi-nafarreraren ezaugarri esklusibotzat hartu izan den maileguetako *-on* lehen testuetarik ageri da (§ 3.1.2.4).

#### *4.1.2.4. Instrumentaleko aldaera apikaria*

Instrumentalaren aldaera apikaria erabiltzea goi-nafarreraren ezaugarri esklusibotzat hartu izan da, nahiz eta iparraldeko goi-nafarrerako mintzo batzuetan ez den ageri. Gainera, *-s* duten hizkera batzuetan *-z* ere agertzen da. Dena dela, Nafarroan ezaugarri hori lehen testuetarik ageri da (ik. § 3.2.1.10).

*4.1.2.5. -*zki *pluralgilea* eduki *aditzean*

Lekukotasunak urriak izan arren, goi-nafarreraren eremu osoan erabiltzen da *-zki* pluralgilea *eduki* aditzaren pluraleko formetan (§ 3.2.2.2.1.3).

*4.1.2.6. Adizki pleonastikoak izan aditzean*

Are eremu murritzagoa zuten erdigunean sortu baina Nafarroako mendebaldera eta iparraldera hedatu ez diren *garade* eta *zarade* berrikuntzek. Dena den, lekukotasunen arabera aski zaharra da (cf. § 3.2.2.2.2).

*4.1.2.7.* Dative flag *edo datiboaurrekoa*

Testu zaharrek erakusten dutenaren arabera, erdiguneko hizketa batzuetan indikatibotik landako NOR-NORI-NORK saileko *dieza- / ieza-* modukoak badaude ere, adizki horiek ez dira orokorrak. Halakoak iparraldeko goi-nafarreraz, lapurteraz eta behe-nafarreraz agertzen dira. Gipuzkeraz Irazustaren dotrinan *diza-* aldaera agertzen da eta, ondoren, *dieza-* modukoak dituzte Larramendik eta Kardaberatzek, besteak beste. Hegoaldeko goi-nafarreraz **erazan* erabiltzen da, baina batzuetan **ezan* ere agertzen da, batez ere datiboa hirugarren pertsona denean (ik. § 3.2.2.2.5).

**4.1.3. Ondorio zenbait**

Emandako adibide horiek guztiek kronologia eta hedadura ezberdina dute, baina guztiak XVI-XVII. mendeetan aski errotuak daude, lehenagokoak diren erakusgarri.

Nagusiki bi garai bereiz daitezke. Ezaugarriek erakusten dutenaren arabera, garai zaharrago batean, baina EBZren zatiketaren ondoren, Euskal Herriaren erdigunean foku garrantzitsu bat zegoen. Zaila da esaten, ordea, Iruñea ote zen edo ez foku nagusia. Lakarraren (2011) proposamena ontzat hartu gero, beharbada, garai hori da Erdiguneko Euskara Batu Zaharraren garaia. Bigarren garai batean, Nafarroak zenbait berrikuntza egin zituen, baina une hartan eragin eremua murritzagoa zen, eta bilakabideak ez ziren goi-nafarreraren eremutik atera.

Arestian aipatu ditugun bi garai horiek lekukotasunak agertu aurrekoak dira. Baina, dirudienez, bada goi-nafarreraren zatiketan eragin handia izan zezakeen beste garai bat, oraingo hau lekukotasunak agertu ondokoa: XVIII. mendetik aurrerakoa. Noski, hipotesiak ikerketa sakonagoa eta zabalagoa merezi luke, baina posible da Iruñean euskarak jasandako beherakadak eragin izana fokuaren indarra galtzean eta, hori dela eta, XVIII. mendetik aurrera goi-nafarreraren barneko azpidialekto eta hizkera gehiago sortzean. Ezagun da XVI. mendearen ondotik gaztelaniaren pisu eta prestigioa nabarmen hazi zela Elizaren, nobleen eta burgesiaren artean. Goi-mailakoek gaztelaniaz hezten zituzten beren seme-alabak eta, ondorioz, euskara landa eremurako geratu zen. Aldiz, hirian, Iruñean, gaztelaniak hartu zuen pisua. Madariagak (2014: 715) ongi laburbiltzen du egoera:

> Hasta el siglo XVIII en la mayor parte de los pueblos rurales las figuras eminentes de la colectividad eran el cura, el maestro (si lo había) y el notable local, la mayor parte

> de los cuales eran bilingües e incluso trilingües, pero que evidenciaban todos los días su deprecio por el habla «vulgar», procurando expresarse entre ellos en la lengua oficial que se suponía más culta. El euskara era considerado por todos ellos como «*rudem et barbarum linguam, cultum abhorrentem*» (lengua tosca y bárbara, incapaz de cultivo). Mucho de estos sacerdotes que provenían socialmente de estratos populares y habían hecho un esfuerzo notable por aprender castellano (o francés) y latín y por elevarse a los niveles sociales y culturales superiores recelaban de ser confundidos de nuevo con la masa y perder así el ascendiente adquirido, procurando diferenciarse del pueblo no sólo en el hábito y las actitudes sino en el idioma.

Aspaldikoa da euskararen galera Nafarroan. Jimeno Juríok (1998: 150-151) azaltzen duenez, euskararen historia bere galeraren historia da Nafarroan, historiaurretik hasita. Halere, galera asko indartu zen XVII eta XVIII. mendeetan. 1604ko lekukotasun baten arabera euskara zen Iruñeko hizkuntza natural nagusia. Dena dela, 1614-1615ean Iruñeko Queipo de Llano gotzainak gaztelaniaz predikatzearen aldeko jarrera nabarmena erakutsi zuen.

Gainera, XVIII. mendetik aurrera, borboien politikarekin joera areagotu egin zen: Elizak nagusiki gaztelaniaz predikatzen zuen, nahiz eta euskarazko sermoiak ere baziren. Hezkuntza unibertsala ez izan arren, eskola gaztelaniaz izan ohi zen eta eraztunaren zigorraren lehen lekukotasunak mende horretakoak dira. Esan dugunez, noble eta burgesek gaztelaniaz hezten zituzten seme-alabak beren etorkizuna ziurtatzeko gortean edo Ameriketan (ik. Madariaga 2014: 710-735). Azken batean, euskaldun elebakar izateak ez zuen laguntzen pobreziatik ateratzen eta gizartean gora egiten (Madariaga 2014: 718).

Beraz, Erdi Aroan euskalduna zen Iruñea euskara galtzen hasi zen XVI-XVIII. mendeetan gaztelaniaren mesedetan:

> La riquísima toponimia vasca de Iruñea y Lizarra durante la Edad Media, y la historia posterior de las lenguas certifican la presencia de una población mayoritariamente vascohablante, o, si se prefiere, bilingüe, que posibilitaba la intercomunicación de la capital navarra con su «barrio» de la Cuenca. La irradiación del romance castellano desde el centro urbano a la periferia fue realidad al disminuir la presencia de vascongados en la Capital hasta quedar reducidos a unas familias, a unos empleados euskaldunes en comercios, y a criados y a sirvientes originarios de la Montaña. No fue la vecindad con Pamplona la causa principal del romanceamiento de su cuenca. (Jimeno Jurío 1998: 160)

Gauzak horrela, badirudi Iruñearen deseuskalduntzea izan zela foku izateari utzi eta goi-nafarreraren barnean azpidialektoak sortzeko faktore sozialetako bat. Euskara ez zen inoiz Nafarroan elitearen, kulturaren eta goi-mailako jakintzaren hizkuntza nagusia izan; aldiz, familia arteko, lagun arteko eta egitura sozioekonomiko tradizionaletako egoeretan euskara zen Nafarroako eremu handienean erabilitako hizkuntza. Dena den, XVII-XVIII. mendeetan eremu horretan euskarak zeukakeen prestigioa galdu bide zuen gaztelaniaren mesedetan. Madariagak (2014: 725) Mikelarenaren datuetan oinarriturik egindako taulan ikus dezakegunez, Nafarroan 1587an % 64,7 zen euskalduna, 1778an % 53,1 eta 1863an % 30,1. Euskararen prestigioa eta indarra galtzen ari den hiriburu batek eragin eremua ere galduko luke eta, beraz, bertan sortutako berrikuntzen hedadura murritzagoa izango litzateke.

Gaiari buruzko ikerketa gehiago eta sakonagoak behar baditugu ere, badirudi Iruñean euskara galtzeak eragin zuela goi-nafarreraren azpidialektoak sortzea, batez ere XVIII. mendearen erdialdetik aurrera.

## 4.2. GOI-NAFARRERAREN PERIODIZAZIO BATERAKO LANGAIAK[1294]

Aurreko atalean ikusi dugunez, dialekto batek dituen ezaugarriak ez dira garai berean sortuak eta, dena aldatuz badoa ere, aldaketa guztiak ez dira erritmo eta abiadura berean gauzatzen. Hori dela eta, § 1.2.1 atalean esan dugun bezala, uste dugu dialektologia historikoa egingo badugu, ezaugarrien kronologia egitea beharrezkoa dela (ik., halaber, § 1.4.7):

> Dialektologiaz dihardugunean kronologiaz jardun behar dugu baitezpada, hizkuntzaren historia eta dialektoen azterketa uztarturik baitaude. Alderdi kronologikoari dagokionez hizkuntza-ezaugarriak bereizteko ohiko sistemari heltzea gauza beharra du dialektologiak: zuzen eta bidezko da ezaugarriak *berrikuntza* / *hautu* / *arkaismo* banaketaren arabera aztertzea. (Camino 2008: 209)

Garrantzitsua da jakitea ezaugarri bat noiz agertzen den eta noiztik aurrera ez den agertzen, eta garrantzitsua da jakitea ezaugarria dialektoaren eremu osoan ala leku zehatz batean agertzen den. Espazioak eta denborak eskutik helduta joan behar dute, zeinahi dialekto edo hizkuntzaren azterketa diakronikoa egin nahi bada. Gurean maiz uste izan denaren kontra, hizkuntza komunitate bat edo dialekto jakin bat hitz egiten duen giza talde bat ez da beti berdin, aldaketarik gabe, mantendu. Aitzitik, hizkuntza komunitateak nekez mantentzen dira egonkor denbora luzez, areago gutxiago erdiguneko komunitate bat, goi-nafarreraz mintzo dena kasu. Isoglosak zabaldu eta murriztu egiten dira denboraren poderioz, eta berriak ere sortzen dira (Pilch 1988: 419). Hori dela eta, dialekto baten lekukotasun zaharrak aztertu eta haren ezaugarriak denboran kokatu eta kronologia eginda, dialektoaren edo hizkuntzaren garai ezberdinak ikusteko aukera egon daiteke.

Hemengo atal honen helburua goi-nafarrera arkaiko eta zaharreko zenbait ezaugarriren kronologia egin eta dialektoaren periodizaziorako langaiak aurkeztu eta zirriborro bat ere eskaintzea da.

Esan gabe doa dialektologia diakronikoa gurean ez dela nahi genukeena bezain aurreraturik eta euskalkien azterketa diakronikoa, kasu askotan, egiteko gauza garrantzitsuen itxaron-zerrendan dagoela (ik. orain Lakarra 2011; ezbairik gabe mami asko duen lana da, eta eztabaida ugari ekarriko du). Horixe da aztergai dugunaren egoera; orain arte gutxi izan dira goi-nafarreraren azterketa diakronikoa egin dutenak, nahiz eta saiakerak egon badauden (ik. § 1.4). Pagolak (1995b), esate baterako, goi-nafarreraren historia moduko bat egiten du, zentzu zabalean, hau da, kanpoko eta barneko historia aztertu ditu. Bestalde, Caminoren (2003a, 2003b) eta Aldairen (1999) ikerketek hegoaldeko goi-nafarreraren irudi osatua eskaintzen dute. Hala ere, goi-nafarrera zaharreko eta arkaikoko testuak ikuspuntu bateratuarekin aztertzeko zeuden,

---

[1294] Atal hau *Monumenta Linguae Vasconum 4* UPV/EHUko ikerketa proiektuak 2015eko maiatzaren 13 eta 15 bitartean antolatutako 2. jardunaldietako aurkezpenaren bertsio idatzi eta osatua da (cf., halaber, Reguero argitaratzear-1).

eta horien azterketa sistematikoa egin dugu liburu honetan (§ 2 eta, batez ere, § 3). Bestalde, Caminok (2008b) abiatutako bideari jarraituz, interesgarri iritzi diogu goi-nafarreraren bilakabideen kronologia garaiz garai egiteari.

Hori dela eta, § 3 atalean aurkeztu eta aztertu ditugun ezaugarriei diakronikoki begiratzen badiegu, gai izan gaitezke, jarraian ikusiko dugun bezala, goi-nafarreraren bilakabidea ezagutu eta periodizazio bat proposatzeko.

### 4.2.1. Periodizazioa zergatik eta zertarako?

Hizkuntza egoera zehatz bat beti izango da aurreko baten ondorio eta hurrengoaren aurrekari. Diakronistak hizkuntzak denboran zehar izan duen bilakabidea aztertu nahi duen heinean, beharrezkoa zaio hasiera puntu bat eta amaierako beste bat finkatzea:

> En todo proceso que se desarrolla en el tiempo, sea físico o social, una situación no es más que la continuación y el desarrollo de la situación anterior: también aquí *omnis cellula e cellula*, según decía Virchow o, en otras palabras, todo estado de lengua procede de otro anterior. Si tomamos una situación (un estado de lengua) como inicial, esto sólo ocurre por razones de conveniencia, de comodidad, si no *ab ovo*, sí al menos a partir de algún estado de cosas que se elige para que haga de punto fijo en el océano del devenir universal. (Mitxelena 1981: 518)

Hizkuntzen egoera berberarekin topatzen gara dialektoei ikuspuntu historikoarekin eta kronologikoarekin begiratu nahi diegunean. Hori dela eta, hizkuntzalariak, edo kasu honetan dialektologoak berak, finkatu behar ditu, ahal dela ohiko estandarrei edo aurretiaz finkaturiko irizpide zehatzei jarraituz, hasiera eta amaierako mugak. Goraxeagoko aipuan Mitxelenak esan bezala, ikertzailearen interesen edo beharren arabera egin daiteke banaketa. Pagolak (1995b) goi-nafarreraren azterketa diakronikoa egiten duelarik, esate baterako, Antzin Aroko geografo greziarrek baskoiez idatzitakoetarik abiatzen da; gu, aldiz lehen lekukotasun idatziak agertzen hasten diren garaitik aurrera hasi gara.

Hizkuntza eta dialektoak aldatuz doazela ukaezina da; aldaketak, ordea, ez dira erritmo eta aldi berean gertatzen, eta horien pilaketek aldaketa kualitatiboa eragiten dute. Behin aldaketa kualitatiboa gertatu ondoren izango dugu beste hizkuntza egoera desberdina.

Nafarroako testu zaharrak begiratzen dituena ohartuko da XVIII. mende akabuko Utergako dotrinako hizkerak eta XVII. mendearen lehen erdialdean Beriain utergarrak baliatu zuenak (§ 2.4.1.1 eta § 2.4.1.2) ez dutela hizkutza-egoera berbera erakusten. Besteak beste, lehenak *ua* > *ue* eta *ia* > *ie* bilakabideak ditu; Beriainek, aldiz, ez. Utergako dotrinak *eu* > *au* egiten du; Beriainek, ordea, ez. Datibo pluralean *-egi* agertzen da dotrinan, baina Beriainek beti *-ei* du. Halaber, ez dute garai bereko mintzoa islatzen Bonaparteren ondareko Berako dotrinak eta XVII. mende bukaeran Berako olagizonak idatzitako gutunek (§ 2.3.4), edo Miguel Elizalde etxalartarrak eta honen izebak idatzitakoek (§ 2.3.6).

Ondorioz, hizkuntza ezaugarrien araberako periodizazio bat finkatzea lagungarri izan daiteke hizkuntzaren edo dialektoaren bilakabidea sakonago ezagutzeko. Ez hori

bakarrik, testu datatu gabeak, edo oker datatu direnak, datatzeko parada ere ematen du periodizazioak.

### 4.2.2. Goi-nafarreraren periodizazio bat

Lakarrak (1997) eta ondoren Gorrochateguik eta Lakarrak (2001) egin zuten lehenengo periodizazio saioa euskararen barneko ezaugarrietan oinarriturik (cf. orain Ulibarri 2013b eta Gorrochategui, Igartua & Lakarra 2018). *A priori*, banaketa hori baliatuko dugu goi-nafarreraren periodizazioa egiteko, eta saiatuko gara erakusten dialektoaren ezaugarrien eta horien bilakabideen araberako periodizazioa bat datorrela Lakarrak proposatutakoarekin. Gainera, hizkuntzaz landako gertaera batzuek garai banaketa berbera berresten dute. Beraz, hauek genituzke Euskara Batu Zaharraren (EBZ) ondoko garaiak:[1295]

1. **Erdi Aroko goi-nafarrera**: EBZ zatikatzen hasi eta lehen testu eta esaldiak agertzen hasi bitarteko garaia. Orduko hizkuntza ezagutzeko, batez ere, lekukotasun onomastikoak eta esaldi llaburrak ditugu (cf. Reguero 2011b, 2012a-c). Egiari zor, *goi-nafarrera* izena eman badiogu ere, hemen koka liteke, beharbada, *Erdialdeko Euskara Zaharra* (Lakarra 2011).
2. **Goi-nafarrera arkaikoa**: 1400-1600 bitartekoa. Hain zuzen, xv. mendean hasten dira goi-nafarreraz idatzitako lehen testuak azaltzen, esaterako 1416an idatzitako gutunak edo mende berean kondestableari eginiko kopla. Nolanahi ere, lekukotasun ugarienak xvi. mendeko prozesuetan jasotako esaldi eta testu laburrak dira. Garai horretan goi-nafarreraren lehen ezaugarri dialektalak lekukotzen dira.
3. **Goi-nafarrera zahar eta klasikoa**: 1600-1745. xvii. mendetik aurrera testu luzeagoak ditugu, eta ordukoak dira gugana iritsi diren goi-nafarrerazko lehen testu argitaratuak. Horietarik dira 1609ko hiru olerki sarituak, Beriainen bi liburuak eta Elizalderen dotrina. Bestalde, interes linguistikoa duen gutunik ere bada.
4. **Lehen goi-nafarrera modernoa**: 1745-1890. Garai horretan, goi-nafarrera aurreko garaietan baino gehiago erabili zen idatziz. Bereziki, Nafarroan zehar han eta hemen predikari lanetan aritu ziren apaizen sermoi andana dugu: egile ezezaguneko Muruzabalgo eta Goñerriko sermoi bildumak eta Markotegik, Martinez Morentinek, Juan Iberokoak eta Joakin Lizarraga Elkanokoak idatzitakoak ditugu, besteak beste.

Gure lan honetan aztertu ditugun garaiak bigarrena eta hirugarrena dira. Dena dela, horretarako kontuan izan behar ditugu bai lehenagoko lekukotasunek bai gerokoek erakusten dituzten ezaugarriak, batez ere garaiak ezaugarrien arabera definitu

---

[1295] Terminologia kontuengatik, *goi-nafarrera* deitu diogun arren, anakronikoa izateko arriskua dugu. Hori dela eta, ohartarazi nahi dugu, hala deitu arren, ez dugula argi ikusten, ikerketa sakonagorik egin ez dugunez, zein arrazoi egon litekeen, esate baterako, *Erdi Aroko goi-nafarrera* deitu duguna orduko «gipuzkeratik» edo «lapurteratik» bereizteko. Gauza bera esan liteke goi-nafarrera arkaikoaz. Ba ote da hizkuntzazko arrazoirik orduko Nafarroako mintzoa, adibidez, Gipuzkoakotik edo Lapurdikotik bereizteko? Euskal dialektologia diakronikoan aitzinatu ahala bakarrik jakingo dugu benetako bereizketarik bazenetz.

nahi baditugu. Arestiko sailkapenean eman ditugun irizpideak hizkuntzaz kanpokoak izan dira, baina, jarraian ikusiko dugunez, hizkuntzaren barneko ezaugarrien arabera egiten dugun periodizazioa berresten dute.

#### *4.2.2.1. Goi-nafarrera arkaikoa*

Garai honetan ditugun lekukotasunak oso urriak eta mugatuak dira. Hori dela eta, bertatik atera ditzakegun ondorioek oztopoak dituzte. Halarik ere, goi-nafarrera arkaikoa Erdi Arokotik bereizten duen ezaugarririk aurki daiteke.

Nafarroa Garaian agertutako Erdi Aroko euskarazko lekukotasunek erakusten dutenez (cf. Reguero 2011b, 2012b), orduan baziren bokal luze edo bikoitzak: *Zaarra* (Leire, 1055, 1085), *Arteeta* (Iratxe, 1087), *Insauspeeco* (Iratxe, 1203), *Ceea* (Iratxe, 1210), *Laarça* (Iratxe, 1218), *Beengoa* (Galar, xiii. mendea). Aldiz, xvi. menderako bokal bikoitz horiek bakandu zirela dirudi. Garai horretan beti bokal bakundun adibideak agertu zaizkigu: *vellaco çarra* (Idozin, 1541), *vellaca çarra* (Idozin, 1558), *errumes çar* (Añorbe-Tirapu, 1546), *agot çarrori* (Iruñea, 1573), *cornudo çarra*, *adaburu çarra* (Iruñea, 1584), *Çarrac çarr aynchu* (Iraizotz, 1597). Mendearen akabukoak bide diren Aresoko otoitz zaharretan *len[…]*, *lenena* ditugu (§ 3.1.1.1).

Arestian ikusitako bilakaerak aurreko ezaugarri baten galerak izan dira eta, ondorioz, dialektalizazioa ulertzeko ez bide dute askorik balio (Camino 2008). Hala ere, badira lehen lekukotasunetarako agertzen diren berrikuntza dialektal zaharrak.

Nafarreraren ezaugarritzat hartzen den sinkopak aski ezaugarri zaharra dirudi. Dagoeneko xv. mendekoa den Pater noster txikian *apostru* dugu, eta *burçagui* agertzen da 1420 urteko testamentu batean (Reguero 2012b: 101). Hurrengo mendean *drauçut* (Zufia, 1552), *atra çuen* (Iruñea, 1596) ditugu sinkoparen adibide (§ 3.1.1.5).

Ikusitakoez gain, goi-nafarrerak duen beste ezaugarri nagusietarik da instrumentaleko apikaria (§ 3.2.1.10). Lekukotasunek erakusten dutenez, xiii. menderako bazen ezaugarri hori Nafarroan: ordukoak dira Nafarroako Foru Orokorrean agertzen diren *ones* eta *gaiçes*. xvi. mende hasieran *dudanas* eta *duquedanas* ditugu Uitziko ezkontzako fedean. Mende horren akabukoak diren Aresoko otoitz zaharretan kasu gehienetan bizkarkaria agertzen bada ere, behin apikaria agertzen da: *gucis*.

Horrezaz landara, hedadura zabalagoa du eta ekialde zabaleko berrikuntza da bizidunetan postposizioekin *baita-* erabiltzea (§ 3.2.1.14). Ez dirudi inon —beraz, ezta Nafarroa Garaian ere—, batak bestea sistematikoki ordezkatu duenik, baina berrikuntza zaharra da, eta dagoeneko xv. menderako lekukotzen da: *Done Johane Garacicoec dute gracia erregue baytaric* (ZalbGut). Aipatu bezala, ez da sistematikoa ezaugarria, bi egiturak agertzen baitira, salbu adlatiboan: *baitara* berandu arte ez da agertzen, eta orduan gutxi; Mendiburuk eta Lizarraga Elkanokoak dute bakarren bat.

Berrikuntzen artean, *joan* aditzaren adizkien formak dira lehen testuetarik sistematikoki agertzen den ezaugarria (§ 3.2.2.2.1.4): *goaye* 'hoa' agertzen da dagoeneko 1593ko Barasoaingo esaldi batean. Ondotik, beti agertzen da forma hori, 1745 aurreko testuetan behinik behin.

Amaitzeko, ikusi dugunez (§ 3.2.2.2.13), goi-nafarreraz aski goiz hedatu zen analogiaz *-te* pluralgilea.

### *4.2.2.2. Goi-nafarrera zaharra*

XVII. mendetik aurrera, lekukotasunen kopuruak eta luzerak gora egiten du nabarmen, eta ordurako badira lehenago lekukotu ez diren hainbat berrikuntza. Jakina, mende horretan lehen aldiz lekukotzeak ez du ezinbestez esan nahi aurreko mendean ez zegoenik, idatziz agertzen ez dela baizik.

Hori gertatzen da, esate baterako, partizipio pleonastikoekin. XVII. mendean ez da sistematikoa, baina maiz erabiltzen dira orduko idatzietan: *izandu*, *egondu*, *jaquindu*, *ibildu* ditu, besteak beste, Beriainek, eta Zannettiren kredoan *ucandu* dator. Aurkitu dugun adibide zaharrenak Iruñeko 1594koa eta 1596koa dira: *uquindu baçindu* eta *içandu zuen*. Erdiguneko hizkerek egindako berrikuntza da honakoa, baina *-ndu* amaierarekin Gipuzkoan (cf. Reguero & Gómez 2016) eta Nafarroan XVII. mendearen hasieratik dugu aldaera hori. Iparraldean, Lapurdiko kostaldean *izatu* partizipio pleonastikoa agertzen da; lehen aldiz Materrak erabiltzen du, baina ez 1617ko argitalpenean, 1623ko berrargitalpenean datozen testu erantsietan baizik (§ 3.2.2.1.2).

Garai bertsukoa da —baina bestelako hedadura duela dirudi— partizipioaren gainean eraikitako aditz-izenak erabiltzea: *jarricen*, *jaycicen*, *ercicen*, *jancicen*, *assicen* gisakoak usu erabiltzen dira Beriainez geroztik (ik. § 3.2.2.1.3). Dena den, hori ere ez da sistematikoki egiten.

XVII. menderako sistematikoki agertzen den ezaugarria da *eduki* aditzaren *-zki* pluralgilea, lehen lekukotasunetatik hasita lekukotzen baita: *dausquin* dugu Iruñeko 1612ko esaldi batean, Beriainek sistematikoki *dauzquiteney*, *dauzqui*, *dauzquigu* gisakoak erabiltzen ditu. Halaber, Urdozko 1687ko aferako lekukotasunetan *badauzqui* agertzen da (§ 3.2.2.2.1.3).

Berrikuntzez mintzo garela, ezin aipatu gabe utzi hegoaldeko goi-nafarreraren ezaugarria den iraganeko *-n* galtzea. Hori ere XVII. menderako ondo lekukotzen da. 1598koa den Etxauriko lekukotasun batean ditugu, dagoeneko, lehen adibideak: *joaninça*, *arrtu cerauda*, *ninça*, *nio*, *çerauda*. 1609ko olerki sarituetan ere beti dira *-n* gabeko formak, salbu eta Ezkurrak dakarren *eri çíran*. Beriainek gehienetan *-n* du iraganean, baina ez beti. Izatez, utergarra izanik *-n* galtzea badagokio ere, Iruñeko euskaraz idazten duela aitortzen duenez, pentsa liteke Iruñean ez zela amaierako kontsonantea galtzen; eta halaxe erakusten bide dute, esaterako, Iruñeko lekukotasun diren *eçinan* (1564), *atra çuen, içandu çuen* (1596) adibideek (§ 3.2.2.2.7).

Aitortu behar dugu, orain arteko adibideak eman arren, ez dagoela garbi eta lausoa dela goi-nafarrera arkaikoaren eta zaharraren arteko etena. Azken horren ezaugarritzat hartu ditugun zenbait XVI. mende bukaeran, azken hamarkadan, lekukotzen dira; beste zenbait, aldiz, XVII. mendean ondo sartuta gaudela. Lekukotasunak urriak dira, eta dituzten ezaugarriak nahiko orokorrak dira ondorio zehatzak atzeratzeko. Hori dela eta, zaila da garaiak markatzea. Beraz, ez dirudi, momentuz behintzat, ezaugarri bat aski zaigunik garai bata bestetik bereizteko. Ezaugarrien konbinazioa eginda, ordea, garaiak nolabait defini litezkeela dirudi.

### *4.2.2.3. Lehen goi-nafarrera modernoa*

Goi-nafarrera zaharraren eta lehen goi-nafarrera modernoaren etena zaharrak arkaikoarekin duena baino askozaz garbiagoa da. Bi garaien arteko jauzia XVIII. men-

dearen erdialdean, 1745-1750 bitartean, jar dezakegu, eta horretarako lagungarri hizkuntzaren barneko zein kanpoko aldaketak eta eragileak har ditzakegu.

XVIII. mendean agertzen den lehen berrikuntzetarik da NOR-NORI-NORK saileko adizkietan gertatzen den *-zki-* → *-it-* aldaketa, lehen adibidea 1729koa baita (ik. § 3.2.2.2.15).

Horrezaz landara, 1745etik aurrerako testuek lehenagokoek ez dituzten ezaugarri ugari dituzte. Hauen artean nabarmenetarik *u_a* > *u_e* eta *i_a* > *i_e* bokal ixteak dira. Bilakabide hori eremu geografikoaren araberakoa da, ez baita sistematikoki hizkera guztietan agertzen. Nolanahi ere den, 1745 aurreko testuek ez dute halako bilakabiderik. Hori kontuan izatea lagungarri izan zaigu Satrustegik (1987: 50-52) ezagutzera emandako Urritzolako bertsoa datatzeko (E § 5.2). Satrustegik XVII. mendearen erdialdekotzat zeukan, eta 1609ko olerki sarituekin alderatu zuen. Hala ere, beste ezaugarri batzuekin,[1296] *u_a* > *u_e* eta *i_a* > *i_e* bilakabideak dituela kontuan izanda, XVIII. mendearen bigarren erdikoa dela pentsatzeko arrazoiak ditugu.

Garai bertsuan hasten da datibo pluraleko *-eri* agertzen. Lekukotzen den lehena 1729ko sermoiko *daudeneri* da, eta 1735ean Frantzisko Elizaldek hirutan erabiltzen du: *ayeri* bi aldiz eta *bienaventuratueri*. Gainerako guztietan ohikoa den *-ei* erabiltzen du. Testuetan, oro har, ezaugarria ez da sistematikoa, eta *-eri* atzizkiarekin batera *-ei* ere erabiltzen da, modu paretsuan. Atzizki horrekin batera, Nafarroako hego-mendebaldean *-egi* agertzen da, beti ere 1745 ondoko testuetan (§ 3.2.1.8).

Goi-nafarrerak dituen ezaugarrien artean dago genitibo singularrean *-aren* > *-ain* eta geroaldian *-nen* > *-in* egitea. Bi ezaugarri horiek lehen goi-nafarrera modernoarekin agertzen dira, ez aurretik. Dena dela, Elizalde da *egoin* 'egonen' dakarren lehena. Hala ere, adibide hori bakarra da; forma osoak, aldiz, usu erabiltzen ditu.

Amaitzeko, bada bi garaiak bereizten bide dituen beste ezaugarri bat ere, *-zue* > *-zie* egitea bigarren pertsona pluraleko adizkietan. 1745 ondoko Nafarroako hainbat eremutan *-zie* egiten da adizki horietan (Camino 2000: 161). Ezaugarri hau, ordea, ez da agertzen testu zaharragoetan, salbu eta 1729ko dotrinan. Bertan agertzen da lehen aldiz, baina orduko testuetan bakarra da; gerora nagusitu zen.

Hizkuntzaren barneko ezaugarri horiez landara, kanpoko eragileak ere bat datoz garai banaketarekin. XVIII. mendearen erdialdean nabarmen ugaritu ziren euskaraz predikatzen zuten apaizen euskarazko sermoi idatziak (ik. Bidador 2004: 48-51). Garai hartakoak dira, besteak beste, Nafarroako hainbat lekutako sermoiak biltzen dituen Muruzabalgo bilduma (Satrustegi 1987), Goñerriko sermoiak, eta Markotegik, Juan Martinez Iberokoak, Martinez Morentingo biek eta Joakin Lizarraga Elkanokoak idatzitako sermoiak. Bestalde, sermoiez landara, Larramendiren eragina duten idazle jantzien liburuak ditugu, Mikelestorenak eta Mendiburuk goi-nafarreraz idatzirikoak kasu.

[1296] Besteak beste, grafian ez du inoiz <ç> erabiltzen, eta horren ordez <c> eta <z> ditu. Espainiako Errege Akademiak 1741ean aratutako grafia sisteman <ç> grafemaren erabilera baztertu zuen (praktikan 1726tik erabiltzen ez bazuen ere; *cf.* RAE 1741: 148-150), eta denborarekin erabaki horrek euskaraz ere bere eragina izan zuen. Horrek testuaren berritasunaren alde egiten du.

# V
# ONDORIOAK

Lan honen aurkezpenean hiru helburu finkatu ditugu (§ 1.1), eta horiek betetzen saiatu gara idatzi ditugun orri hauetan guztietan. Xede horiei jarraituz, batetik, 1745. urte aurretik goi-nafarreraz idatzi diren lekukotasun guztiak jaso, editatu eta iruzkindu ditugu. Bestetik, testu horiek aintzat hartuta, dialektoaren azterketa diakronikoa egin dugu. Azkenik, azterketa horretan oinarriturik, goi-nafarreraren sailkapen eta periodizazio proposamen bat egin dugu. Beraz, saio honetan lan filologikoa eta dialektologikoa uztartu dira (ik. § 1.2).

Testuak izan ditugu datu iturriak, une oro. Hori dela eta, lekukotasunen fidagarritasunaz hitz egitea biziki garrantzitsua iruditu zaigu (§ 1.3). Ulibarrik (2015) ekindako bideari jarraitu diogu, eta defendatu dugu, batetik, testu guztiak direla fidagarriak eta aldatzen dena dialektotasuna dela eta, bestetik, dialektotasun maila hori testuen helburuaren eta testuinguruaren araberakoa izan ohi dela, ez baitira gauza bera Nafarroa osorako argitaratutako dotrina bat eta herri bateko elizan erabiltzeko egindako beste bat. Horregatik, testuen kategorizazioa egin eta fidagarritasun eskala bat proposatu dugu, Schneiderrek (2003) egindako sailkapena testu zaharretara egokituz. Beraz, lekukotasun idatzietarako ondoko sailkapena proposatu dugu: berehala jasoa, ondoren jasoa, pentsatua, behatua eta asmatua. Jakina, guztiek ez dute pisu berbera. Berehala jasotakoek bere horretan ematen dute hiztunak esandakoa —prozesuetan jasotako esaldiek adibidez—; aldiz, beste testu batzuk sortzeko denbora gehiago behar izan dute eta, beraz, ahozkotik urrunago dagoen hizkera islatzen dute. Dena den, guztiak dira —erregistroa gorabehera— garai zehatz bateko hizkuntzaren lekuko (cf. § 1.3.2).

Testuen izaerari begiratzeaz gain, testuen kokapen geografikoa ere kontuan izan dugu. Iraganeko hizkera aztertzen ari garelarik, zenbat eta toki gehiagotako lekukotasunak izan, orduan eta garbiago ikus daiteke ezaugarriek duten hedadura. Hori dela eta, 5. mapan 1745 aurreko lekukotasunak dituzten Nafarroako ibar eta udalerriak erakutsi ditugu. Bertan ikus daitekeenez, Nafarroa euskalduneko leku gehienetan ditugu lekukotasunak, baina ez dira guztiak tamaina berekoak. Leku batzuetan testu luzeak baditugu ere, beste leku batzuetan esaldi solte bat besterik ez dugu. Beraz, desoreka handia dago, lekua zein den.

Bigarren kapituluan, xv. mendean hasi eta 1745 bitarterainoko testuak bildu eta editatu ditugu (§ 2), aurretiaz finkatu ditugun irizpideei jarraituz (§ 2.1). Orotara, luzera ezberdineko 100 lekukotasun inguru jaso ditugu. Batzuk prozesu zaharretan agertzen diren ezkontza fedeak eta lekukoen esaldi laburrak dira; norbait omentzeko, goresteko edo iraintzeko sortutako koplak ere baditugu. Bestalde, badira errefrauak,

olerkiak, gutunak, sermoiak eta dotrinak ere. Horien guztien edizioak aurki daitezke liburu honetan.

Sarreran azaldu dugunez (§ 1.2.2), goi-nafarreraren, edo ezein euskalkiren, historia eta bilakabidea ulertzeko ikertzaileak beharrezkoa du aurretiaz dialekto horretan idatzitako lekukotasunak aztertu eta ezagutzea; hain zuzen ere, hori betetzen saiatu gara bigarren kapituluan (§ 2).

Kasu gehienetan testuen jatorrizko lekukotasunetara jo dugu irakurketa ahalik eta fidagarriena izan dadin. Horrek aukera eman digu, zenbaitetan behintzat, testu batzuetan aurreko editoreek proposatutako grafia zuzentzeko; adibidez, 1609ko Iruñeko olerki sarituen (2.2.14) eta Zannettiren kredoaren (2.2.17) grafian badira aldaketa batzuk, gure edizioa Mitxelenaren edo Vinsonen edizioekin erkatzen badugu. Irakurketa berri horiek, beraz, euskal grafiaren historiari lagun diezaioketela uste dugu. Bestalde, aurreko editoreek egindako irakurketa huts batzuk zuzendu ditugu; besteak beste, Maiorak (2011) ezagutzera emandako Baraibarko 1649ko esaldian *vidal chimec* irakurtzen duena, guk *vidaldu nic* proposatu dugu, eta berak *bida duena* ikusi duena guk *bidaldu uena* ikusten dugu (§ 2.2.8.5). Beste adibide bat izan daiteke ondokoa: Mitxelenak eta Sarasolak Joseph Elizalderen gutunetan irakurtzen duten *zergatic* hitza *zugatic* dela ziurtatu dugu jatorrizkoa begiratzean (§ 2.3.5). Horien artean, nabarmentzea merezi du Uitziko 1506ko ezkontza fedeko irakurketa berriak. Satrustegik *nayçacanala* proposatzen du, eta iradokitzen du hitanoko adizkia dela, datiboa emakumezko bigarren pertsona delarik. Dena den, espero duguna datiboko hirugarren pertsona da. Hori horrela, *nayçacan, ala* banaketa proposatu dugu. Hartara, adizkia *nayçacan* 'natzaion' genuke, Otxoa Arinek dakarren *natzaiko*-ren pare (§ 2.2.7.1). Halaber, interesgarri iruditu zaigu Madrilen Historiaren Akademian dagoen Isastiren obraren kopia ikustea. Hori eginda, ohartu gara 1850eko argitalpenean *neretaco* dena kopian *nerezaco* jartzen duela (§ 2.2.19.4).

Hori gutxi ez eta, ezagutzen ez genituen testu batzuk ere eskuratu ditugu; esaterako, Satrustegik (1990a, 1990b, 1991b) emandako Aresoko otoitzez gain, liburu berean gehiago zeudela ohartu ginen (§ 2.3.1). Prozesuetan Maiorak (2011) emandako esaldien bila aritzean, hark ikusi ez zituen beste batzuk aurkitu ditugu guk. Bestalde, digitalizazioei esker, Austriako liburutegi nazionalean dagoen Beriainen alea aurkitu dugu (§ 2.4.1.1). Gainera, edizio filologikorik ez zuten —Beriainen tratatua— edo eskuratzen zailak ziren —Beriainen dotrina— testuen edizio kritikoak eskaini ditugu (§ 2.4.1). Tamalez, ez dugu Antso Eltsokoaren dotrina edo Undianoren kantutegia aurkitu, baina horiek azaldu bitartean goi-nafarrera arkaiko eta zaharra ezagutzeko eta ikertzeko corpusa egoki osatu dugulakoan gaude.

Hain zuzen ere, bigarren kapituluan editatu eta iruzkindu diren testu horiek guztiak izan dira zutabe nagusi hirugarren kapitulua idazteko. Atal horretan, goi-nafarrera arkaiko eta zaharrak dituzten hizkuntza-ezaugarri nagusiak aztertzen dira, bai ezaugarriek denboran izan duten bilakabidea ulertzeko, bai hedadura zein den ezagutzeko. Azterketa horretan fonologiako, morfologiako, sintaxiko eta lexikoko hainbat eta hainbat ezaugarriren iruzkin dauden.

Ondorioz, ikus daiteke XVI. menderako goi-nafarrerak badituela ezaugarri esklusibo batzuk, baina dituen berrikuntza gehienak inguruko dialektoekin —batez ere lapurterarekin eta gipuzkerarekin— partekatzen dituela (cf. 3.1 eta 3.3 taulak). Bes-

talde, ikusi dugu egungo goi-nafarrerazkotzat hartu ohi diren ezaugarri esklusibo batzuk (cf. § 3) testu zaharretan ez direla agertzen, edo oso bakan agertzen direla. Esate baterako, NOR-NORI-NORK sailean *-zki-* > *-it-* aldaketa egitea Bortzirietan bakarrik agertzen da 1750 aurretik (§ 3.2.2.2.12). Gainera, absolutiboko bigarren pertsona singularrari dagokion *y-* morfema ez da agertzen lekukotasun zaharretan; bai, ordea, testu berriagoetan. 1778an aurkitu dugu *bayaiz* 'bahaiz', baina lehenago zail da halakorik ikustea. Aitzitik, zaharrak dirudite beste ezaugarri esklusiboek: maileguetan *-on* (§ 3.1.2.4), instrumentalean *-s* (§ 3.2.1.10), *eduki*-ren adizkietan *-zki* pluralgilea (§3.2.2.2.1.3) eta *joan* aditzaren *noaie* moduko adizkiak (§ 3.2.2.2.1.4), adibidez, lehen lekukotasunetatik agertzen dira. Halaber, ikusi dugu askotan ezaugarriak galtzen aitzindari izan dela goi-nafarrera (cf. 3.2 eta 3.4 taulak).

Horrezaz landara, aztertu ditugun ezaugarri ugarien artean bi proposamen nabarmendu nahi ditugu. Batetik, erakutsi dugu hegoaldeko goi-nafarreraz **erazan* XVIII. mendean lekukotzen dela —besteak beste, Elizaldek erabili zuen 1735ean, baina aginterazko adizkietan bakarrik—. Gainera, saiatu gara frogatzen aditz laguntzaile hori, hegoaldeko goi-nafarreratik landa, Zaraitzun eta Erronkaribarren ere erabiltzen zela (§ 3.2.2.2.5). Bestetik, orain arte uste izan denaren kontra, *-i(n)-* erroa aditz laguntzaile gisa erabiltzea erdiguneko hizkerek egindako berrikuntza dela pentsatzeko argudio batzuk eman ditugu. Gainera, hizkera batzuek **eradun* eta *-i(n)-* aditz laguntzaileekin duten polimorfismoa Hockek (1991: 440) proposatutako guneen banaketaren bitartez azaldu dugu (§ 3.2.2.2.4).

Horrez gainera, mapa batzuk sartu ditugu azterketaren osagarri, eta 8. eta 9. mapetan ikusten da, besteak beste, Nafarroako iparraldeko eskualdeek —Bortziriek, Baztanek eta Aezkoak— Iparraldeko hizkerekin partekatzen dituzten berrikuntzak dituztela eta gainerako hizkera nafarretatik bereizten direla.

Azkenik, laugarren kapituluan goi-nafarreraren sailkapenaz eta periodizazioaz ohar batzuk egin ditugu. Bertan, Caminok (2003a, 2003b) egindako proposamena berretsi dugu; alegia, erakutsi dugu denboran zenbat eta atzerago egin orduan eta txikiago dela hegoaldeko eta iparraldeko goi-nafarreren arteko desberdintasuna. Halere, ikusi dugu lehen lekukotasunak agertzen direnerako bi azpieuskalkiak bereizteko adina ezaugarri badaudela. Dena den, bien arteko aldea nabarmen hazten da XVIII. mendearen erdialdetik aurrera. Ikusi behar da hori guztia nola lotzen den Lakarrak (2011) egiten duen proposamenarekin; izan ere, Nafarroan dagoen aniztasun dialektala argumentutzat hartzen du Euskara Batu Zaharraren «eraikuntza-gunea» Iruñetik iparraldera dagoela defendatzeko.

Proposamen hori baieztatzerik ezin izan badugu ere, laugarren kapituluan goi-nafarreraz agertzen diren hedadura zabalagoko eta murritzagoko zenbait ezaugarri eta horien kronologia begiratu dugu, Iruñearen foku indarra noizkoa eta zenbaterainokoa zen neurtzeko. Hori horrela, hiru garai bereizi ditugu. Lehen garaian, Iruñeak foku gisa indar handia zuela dirudi, ezaugarriek goi-nafarreraren eremua gainditzen baitute. Beharbada, Erdiguneko Euskara Batu Zaharraren (Lakarra 2011) garaia izan liteke. Bigarren fase batean ikusten dugu Nafarroako erdigunean sortu diren berrikuntza batzuek ez dutela Nafarroa osorik hartzen edo ez dutela dialektoaren muga gainditzen. Bi garai horiek ezagutzen ditugun lekukotasunak agertu aurrekoa dira, baina horretarako arrazoi historiko eta soziolinguistikoak eman ditugu. Azkenik, hirugarren garai bat dago, XVIII. mendearen erdialdetik aurrera. Garai hartatik aitzina,

## 3. ERANSKINA. ELIZALDEREN ADITZAK

Beriainekin egin bezala, ondoko tauletan Elizaldek darabiltzan aditz zenbait jaso ditugu. Lehen taulan indikatibotik landako aditzak jaso eta aditzoin ala partizipioa erabiltzen duten bereizi dugu. Bigarren taulan indikatibotik kanpoko NOR-NORK eta NOR-NORI-NORK saileko adizkiak bildu ditugu. Gainera, azken horretan aginteraren eta gainerako moduen (subjuntibo, baldintza, ahalera eta jusiboaren) arteko bereizketa egin dugu.

### 3.1. Aditzoin eta partizipioaren erabilera Elizalderen dotrinan

| *-tu* aditzen aditzoinak | *-i* aditzen aditzoinak | Partizipiodunak |
|---|---|---|
| libera gaitzazu | icusagun | etorri bedi |
| salva zaizala | icusagun | ezcaizazula utzi |
| salba zaizala | imin zazu | eracutsi dazaguzu |
| salva zaizala | issil daiteque | etorri vedi |
| salva zaizala | | ezcayzazula utzi |
| salva zaizala | | imini bedi |
| santifica bedi | | izuli zazu |
| cumpli bedi | | |
| barca dazquiguzu | | |
| libera gaizazu | | |
| salva zaizala | | |
| salva zaizala | | |
| salva zaizala | | |
| mereji dezazquigun | | |
| erresponda zazu | | |
| libera gaizazu | | |
| libera gayzan | | |
| libera gaizan | | |
| libera gaizan | | |
| sinesta dezagula | | |
| espera dezagula | | |
| engaña gaizaque | | |
| salba daique | | |
| esca dezogungatic | | |
| santifica vedi | | |
| lauda dezagula | | |
| Gueldi dadila | | |
| barca dazquiguzu | | |
| guarda gaizala | | |
| libera gaizazu | | |
| salba zaizala | | |
| salba zaizala | | |
| estezatela falta | | |

| *-tu* aditzen aditzoinak | *-i* aditzen aditzoinak | Partizipiodunak |
|---|---|---|
| baru daytezquenac<br>beguira zazu<br>beira zaite<br>disponi gaytecen<br>escapa daytequenean<br>guerta daquioque | | |

### 3.2. NOR-NORK eta NOR-NORI-NORK saileko indikatibotik landako perifrasiak

| NOR-NORK | | NOR-NORI-NORK | |
|---|---|---|---|
| Agintera | Besteak | Agintera | Subjuntiboa |
| eguin zazu<br>eguin zazu<br>erresponda zazu<br>icusagun<br>icusagun<br>erran zazu<br>erranzquizu<br>erran zazu<br>imin zazu<br>erran zazu<br>eguin zazu<br>erran zazu<br>erran zazu<br>erran zazu<br>erranzquizu<br>erran zazquizu<br>erranzquizu<br>beguira zazu<br>erran zazu<br>erran zazu<br>eguyn zazu<br>eguyn zazu<br>erranzquizu<br>erranzquizu<br>erranzquizu<br>erranzquizu<br>erranzquizu<br>erranzquizu<br>erranzquizu<br>erranzquizu<br>erranzquizu | eguin dezaten<br>erran dezala<br>sinesta dezagula<br>espera dezagula<br>lauda dezagula<br>eguin dezatela<br>estezatela falta<br>ezin dezaquenac<br>eguyn dezagun<br>edan baleza<br>eraman baliz | eman dazaguzu<br>barca dazquiguzu<br>eracutsi dazaguzu<br>Barca dazquiguzu | esca dezogungatic |

## 4. ERANSKINA. LIZARRAGA ELKANOKOAREN NOR-NORI-NORK SAILEKO INDIKATIBOTIK LANDAKO ADIZKIAK

Eranskin honetan Lizarraga Elkanokoak *Ongui iltzen laguntzeco itzgaiac* liburuan erabiltzen dituen indikatibotik landako NOR-NORI-NORK saileko adizkiak bildu ditugu. Horretarako, Ondarrak (1984) paratutako edizioan osatutako adizkitegia erabili dugu.

| Niri | Zuri | Hari | Guri | Haiei |
|---|---|---|---|---|
| balezada<br>dezadan<br>dezadaten<br>dezquidala<br>lezadan | balezazu | baguindezo<br>bezo<br>dezogun<br>dezoque<br>dezoquet<br>dezoquete<br>dezoquezu<br>dezon<br>dezozque<br>zezoten<br>zogun<br>zozu<br>nezozque<br>guindezoque<br>nezozque<br>itzulogun | balezagute<br>bezagu<br>dazquiguzu<br>dezaguque<br>zaguzu | bezote (haiek)<br>bezote (hark)<br>dezogun |

## 5. ERANSKINA. 1745-1750 BITARTEKO TESTUAK ETA ZALANTZAZKOAK

Azken eranskin honetan 1745-1750 bitartekoak diren eta diratekeen zenbait testu sartu ditugu. Gure corpusetik kanpo geratu dira, bai datagatik 1745 ondokoak direlako, edo bai data zehatza ez dakigulako. Dena den, ustez guztiak dira 1750 aurrekoak; hori dela eta, hona ekartzea erabaki dugu goi-nafarrera zaharraren eta modernoaren arteko zubian daudelako. Badira garai horretako beste testu batzuk, argia beste beste nonbait ikusi(ko) dutenak azterketa sakonagoarekin: Sanzberroren Etxalarko dotrina (Reguero 2017) eta Baztango Elbeteko eta Elizondoko 1750eko eliza-aginduak (Reguero 2019). Edizioa egiteko irizpideak eta egitura 2. atalean jarraitutako berberak dira.

### 5.1. Larrasoañako sermoia

Ondoko sermoi hau Satrustegik (1987) ezagutzera emandako Muruzabalgo bilduman agertu bide zen. Dena dela, ez dago Euskaltzaindiaren esku dauden gainerakoekin. Ondorioz, ezin izan dugu jatorrizkoa ikusi eta Satrustegik (1987: 57-60) emandako edizioan oinarritu gara (aparatu kritikoan S erabili dugu Satrustegi aipatzeko).

Sermoiak ez du datarik, baina Satrustegiren liburuaren hurrenkera kronologikoari jarraitzen badiogu, XVIII. mende hasieran kokatzen zuela dirudi. Hala ere, data ez izateak zalantza eragin digunez, eranskinean sartzea erabaki dugu Mitxelenaren (1971: 327) ondoko hitzak gogoan:

> La idea de que la historia propiamente dicha de una lengua, de la vasca como de cualquier otra, sólo puede edificarse sólidamente sobre documentos fechados y localizados con la mayor precisión posible, no ofrece ninguna novedad.

Sermoiak urterik ez badu ere, badirudi San Nikolas egunean irakurri zela Larrasoañan.

### *5.1.1. Testua*

*Homo quidam peregre proficiscens vocavit servos suos et tradidit illis bona sua.*
*Mathei. 25.*

Dichososco erria, dichosoa diot dela Larrasuaña. Dichosoa? Bai, baita egun egun bat ceñetan mundu guciac eman baidizazquiquezu aimbat dicharem ordu onac. Bada, egun da eguna ceñetan continuacen da gure memoriam San Nicolasem festari munduan eman cequion lendabicico paisua. Egun da eguna ceñetan arguitasun ederrenac ecarri[1299] baitigu mundura dembora dichosoena. Eta, finalmente, egun da eguna ceñetan gustos beteric correspondacen baitiote larrasuañaquei[1300] agradecimentuarequi. Orrengatic, guciac alegra daitezque egungo egunean. Alegra daitezque, egungo eguneam, aurrac. Alegra daitezque gasteac. Alegra daitezque virginidadia guardacen dutenac. Alegra daitezque zarrac. Eta, finalmente, igon guelditube,[1301] chiqui eta andiac, egungo egunean, negociyos bete daitezque. Ay bezate nola erraten duen San Pedro Damianoc: *letentur pueri, iubenes gratulentur honorent(u)r Virgines, senes exilarentur et omnis etas personanter aludat*. Alegra bedi, bada, mundu gucia, allegatu vaice egun ura, ceñetan planeta lucituenaren paisuaren contra, icusten dire vere raiuen su dichosoac. Bada, egun veneracen ditu admiraciorequi munduac labraturic San Nicolasen debotoendaco[1302] gloriaco coronac, icusten duelaric claroqui ceruco videa esiric lurretic allegatu arteo Trintate Jaun poderosoaren jaureguiraño. «Alaba dizagun,[1303] bada, gucie» erraten du San Pedro Damianoc. San Nicolas Gloriosoa, bada, guciec dugu obligacio alabaceco. Ala erraten digu San Pedro Damianoc: *unusquique enim habet materiam gaudiorum ut laudens pueri puerum (..) iubenes iubenem liberantem, vir-*

---

1299 ecarri] esk. *equarri*.

1300 larrasuañaquei] Sk *larrasuañaquet* dakar, baina ez dakigu zehatz *-t* hori zer den, eta aditzaren komunztadurari begira, datiboa behar duela dirudi. Hori dela eta *-t* → *-i* zuzendu dugu. Bestalde, bistan denez, <que> horretan, /kue/ irakurri behar da.

1301 igon guelditube] ez da erraza hau interpretatzen, beharbada 'ihon gelditu gabe' izan daiteke.

1302 debotoendaco] Sk jarraian *labraturic* dakar parentesi artean.

1303 dizagun] lausoa da honen interpretazioa. Afrikatuak markatzen ez direnez, 'ditzagun' izan daitekeela dirudi, baina objektua *gucie* singularra da. Beraz, 'dezagun' izan liteke. Gainera, pluraleko adizki horietan *-zki-* bide da sermoi honetan erabiltzen den pluralgilea; cf. *ay bezazquite*.

*gines virginum infamiam redimentem, senes senis inopeam miserantem et virgines* senes *cum iunioribus, laudent nomem Domini huyius.*

Ezta San Nicolasen elogio admiracen dudanic eta ain guti gloria estrañacen dudanic. Cergatic egungo eguna da egun bat cenetam zaticen delaric esphira celestiala, usten da veneracera Jesus gure redemtorearen Elizaren ceruam. Goico apez andia, christioen consejazale fiela, gobernu espiritualaren maistruem maistrua, vervo divinoarem disposicioarem prefectoa, Trintate Jaun Poderosoarem oraculoa, Elizarem espectaculo gozoa, gentilidadearem destruizalea eta zeru eta lurrarem eredero universala. Egum veneracen da Eliza militanteam apostoluem firmamentua,[1304] zeruco jauregico maistrua, confirmacen duena dudas veteric dagona, gorazen duena eroriric arquicen dena eta, finalmente, conservacen dena Jangoicoarem servizu sanduam, firme ongui vici dena. Egun veneracen da penitencia eguiten dutenem egemplúa, vecatariem adisquide eguinzalea, Jesus gure redentorearequi vici derem[1305] muralla eta, finalmente, digno dena gucis gucis alabatua izateco zeruan eta lurream. Au guciau da San Nicolas gure patronoa.

Goacem esplicatus. Presente daucagu, fielac, egun dichoso ura ceñetan Eliza guciac consagracen dizquio cultu obligacioscο evec San Nicolas gure patronari, ceñen dotrina hizandu ce guretaco ceruco arguitasun maravilloso batem raiu bat, ceñec emanten digularic ezaucera munduco redentorea, causatu zue gure viocetan San Pabloren vaitan oñastura milagroso arc causatu zuen efectu maravilloso ura: *subito circun fulsit eum lux ce celo*. Eztadiela gloriatu España gloria andi ayes, ceñec eguiten dutelaric dichosoa munduco estimacioetam, eztire cabicem miarem iz edo espresionetam, erraten du Claudianoc: «*quid dignum memorare tuis Ispania tems mens humana valet*». Ez vere animalem generosidadeas, campoem emateas vere metalarem preciosidadeas eta, finalmente, aimbat principe andirem piedadeas, *dives equis, frugum facilis, pretiosa metalis*, cergatic nola guizon ura vaice ain soberanoa, nai zue iduritu gauza gucietan dibinoa. Celarican guizona ematen zuenean eta jauna escacen zuenean, orzicen zuelaric magestadea, eguiten zuen ondasunarequi iduritu vear zuenean lucituric guelditu vear zuela, eta esplicacen celaric magestuosoa talentuac cobraceco deseoarequi, iduricen zuenean ocultatucen zuela magestadea.

Modu prodigioso au, bada, practicatu zue San Nicolas gloriosoac eta icus dezatem claro, ai bezazquite bi sucesso prodigioso. Jaquindu zue San Nicolasec iru nescacha castidadea guardazem zutenec peligrazen zutela[1306] bere honrram conveniencia faltas, eta bereala remediatu zue necesidade ain andi ura egosten zuelaricam[1307] bere capam dirua aien dotearemdaco, baña eguin zue ocultazem zelaricam gure sandua egecutatu baizue gauas obra prodigiosa gura. Berze ocasio bateam tratazen zelaricam egiteco Miraco obispoa, zein baize bere erria,

[1304] Apostoluem firmamentua] Sk parentesi artean dakar, beharbada lerro artean erantsi zen. Bestalde, *apostoem* laburdura dakar.

[1305] derem] Sk hala dakar, beharbada *diren* da.

[1306] zutela] Sk *peligrazentutela.*

[1307] egosten zuelaricam] Sk aurretik *(parazen zuelaricam)*.

bera goan ze obispoem congregatiora mitraraco ofrezizem zem bezala. Con que,[1308] bai, bada, claro dago San Nicolasec nai[1309] izandu zuela iduritu obispo eta principea zeneam[1310] guizona. Eta nai izan duela iduritu guizona bilatu izandu zeneam obispo eta principetaco, eguia da iduritu bear baizue San Nicolasec guizona guizona ezeneam, eta izandu bea baizue gueiago idurizem ezueneam.

Modu ontam bizi izandu ze San Nicolas gloriosoa mundu ontam soberanoa bezala. Eta entendazen zituelaric discretoac bezala munduaren gezur fabulosoac, ala trata zue apartazem zituelaric beregana[1311] munduarem onrra eta gustoac baita precisso ustea onem ondasunac llorearem erdechizeco.

Uzizeitue Christo gure jaunarem discipuloec Christo gure jaunarem izari obedienteac bezala erreteac. Eta erraten digu testuac zeucatem guzia uzi zutela apostoloec: *reliquimus omnia*. Guzia iduquizen du oñem azpiam, despreziazen duenac errete bat, bada errete guezurti bazuetara dago reduciturіc fortunaric andiena. Eztu ezaucen fortunarem reynua verze vasalloric, vaicicam nobleza, fama eta ondasunac. Ondasun evec guciac dire errete engañazale vazuc cautibazen baytituzte veren enganuequi vorondateac. Idalguiaren[1312] erretean eroricen dire gende andiac, abrastasunarenean avariciosoac eta fama edo estimacioareneam eroac, orla estu dudaric idalguia, fama eta ondasunac direla errete enganazale vazuc, cautibacem baitire guizon guciac.

Huci citue errete guezurti evec San Nicolasec, huci vaicitue nobleza edo idalguia ondasunac eta onrra. Andia izandu ce vere nobleza, jaio vaice Loriaco gende estimatuenetatic. Vere fama allegatu ce ocupacera aimbat templo, nola meregitu vaizue vere anditasunac oraculo, vere ondasunac izandu cire choil andiac, baña despreciatu citue nobleza fama eta ondasunac, ezautu baizue guciac cirela guezurtiac.

Talentuen amplicacio estraordinario bat paracen da egun veguien aurrean afectu humanoetan. Guizon batec ederqui erreparticen ditu vere mutileri vere ondasunac. Lendabicicoari ematen dizquio borz porcione, vigarrenari bi eta irugarrenari bat. Borz talentu artu cituena salbacen da. Artu cituena bi logracen da, eta bat artu zuena condenacen da; lendabicico biec empleatu vaicituzte desinteresatuec vezala talentuac. Bana irugarrenac guardatu zue aimbat, eci eguin vaizue lurreco negositan desenganatu bat, *abscondit talentum in terra*. Eta guardacen dituenac talentuac condenacen da, erreparticen dituena salbacen da, baita ez galceco vedia erreparticea.

Isuri zue San Nicolasec idalgoen talentua gueyago estimatu vaizue humilequi contacea eci ez idalgoen patioac paseacea, despreciatu citue vere famaren talentuac, veti beguiratu vaizue fortunarem favore falta dadequena[1313] vezala. Finalmente hisuri citue vere ondasunem talentuac, veguiracen cituelaric afi-

---

1308 con que] Sk parentesi artean.
1309 nai] Sk. *Nain*, <n> etzana.
1310 zeneam] Sk *zemeam*, lehenengo <m> etzana.
1311 beregana] Sk *beregama*.
1312 Idalguiaren] Sk *Idalguaren*, baina cf. aurreraxeago *idalguia*.
1313 dadequena] ez dakigu zehazki hau nola interpretatu.

cionerequi munduac, hizandu vaizue escu gueyago emateco eci ez veso erdichiceco.

Ordua da ya descubri dezagun despreciace modu au arguitasun eder baten arguiarequi. Igan ce Moises Sinay deycen den mendi baten goienera, eta chauchi ce aimbat arguitasunequi vere aurpeguian, eci iduritu baizue evasi cizquila ilarguiari vere raiuac. *Erat lunata facies moise*. Ilargui ura bera icusi zue San Juanec andre batem oñen azpiam, *et luna sub pedibus eius*, gauza au iduritu cequio ceruco prodigio andi bat, *signum magnum aparuit in celo*. Bada, nola ezue iduricen Moysesec milagro ain andia, cergatic cirelarican bazuc arguitasunac, choil apartatuac cire escuac. Chauchi cen zue Moysesec ilarguia, ceucalaricam corona eder bat vezala. San Juanec icusi zuen andreac ceuca ilarguia oñen azpian, ala nola valiza ausa, *sub pedibus eius*. Da ilarguia ondasunen ispilu claro bat baita inconstancia guciem representacio iduritu bat. Eta nola andreac despreciacem baizue aimbat, iduritu zue portento estraordinario bat, baita virtute omnipotentearem milagro prodigioso bat, arquicea avaricia humano bat ain desinteresatua eci despreciacen baititu ondasunac ausa direm vezala.

### *5.1.2. Iruzkina*

Grafia aldetik aipagarri dateke hainbatetan agertzen den bukaerako *-m*, besteak beste: *dicharem*, *memoriam*, *Nicolasem*. Askotan sudurkari hobikariaren lekuan agertzen da.

Fonologiara pasatuz gero, *esiric* 'itxirik' adibidean ikus daitekeenez, *e-* zaharra mantendu da, baina *iduquizen* adibidean, aldiz, *e-* > *i-* itxi da ondoko *u*-ren eraginez. Bestalde, *au* > *a* gertatu da *arquicen* adibidean. Oro har, ez da *a* > *e /i,u_* egiten, baina behin *gucie* dago. Bestalde, sinkoparen adibiderik ez den arren, *Trintate* 'Trinitate' dugu. Sistematikoa ez bada ere, batzuetan herskari aurretik igurzkari lepokaria apikari egiten da: *dichososco*, *usten*. Goi-nafarreraz ohi denez, maileguetan *-on* mantentzen da: *patrona* 'patroi'. Dena den, *patronoa* ere ageri da; beraz, lehena errata izan daiteke. Bestalde, lat. *-ionis* bukaerarako, bi aldaerak ditugu: *porcione*, baina *amplicacio*. Gainera, *-rz-* egiten da: *berze*, *borz*. Amaitzeko, zenbait uzkurdura ditugu: *bea* 'behar', *ezaucen* eta, irakurketa zuzena bada, *uzizeitue* 'utzitzen ditue'; hau bide da eskualdeko adizki bakarra *-te* duena, gainerakoetan *(di)tuzte* baitago.

Morfologiaz den bezainbatez, erakusleetan, lehen graduko pluralean *evec* 'hauek' agertzen da, eta singularreko hirugarren gradukoetan *prodigiosa gura* dago behin, baina gainerakoetan *ura* erabiltzen da: *guizon ura*, *andi ura*. Ergatibo pluralean *-ek* erabiltzen da beti, hemen bi adibide: *guciec dugu obligacio alabaceco*, *Uzizeitue Christo gure jaunarem discipuloec*. Instrumentalean sistematikoki apikaria daukagu: *gustos*, *negociyos*, *dudas*, *gucis*, *esplicatus*, *ayes*. Soziatiboan hegoaldeko goi-nafarreraz ageri den *-reki* aldaera dugu: *agradecimentuarequi*, *admiraciorequi*. Destinatiboan *-endaco* dago: *debotoendaco*, *guretaco*, *dotearemdaco*. Prolatiboan *-tako* erabiltzen da: *principetaco*. Bizidunekin *baitan* dago: *San Pabloren vaitan*. Datibo pluralean *-eri* daukagu behin, *mutileri*, baina gure interpretazioa zuzena bada, *-ei* daukagu *larrasuañaquei* adibidean. Izen morfologiarekin amaitzeko, *-o* agertzen da denbora zentzua emateko: *arteo*.

Aditz morfologiari dagokionez, jokatugabeen artean aipagarri dira *(h)izandu*, *jaquindu* gisako partizipio pleonastikoak. Bestalde, aditz-izenak egitean *emanten* dugu. Horrezaz landa, zenbait aditz-izen sortzeko, partizipioa hartzen da oinarri: *uzizeitue*, *eroricen*.

Jokatuetan, *izan* aditzaren hirugarren pertsonako adizkia *dire* analogikoa aurkitzen dugu. **Edun* aditzaren orainaldiko adizkietan *-u-* dago: *dudanic*. NOR-NORI saileko iraganean, *-ki-* zaharra mantentzen da: *eman cequion* 'eman zitzaion', *iduritu cequio* 'iruditu zitzaion'. Indikatibotik landa, aditzoina ondo bereizten da: *alegra daitezque*, *ay bezate*, *alaba dizagun*, *icus dezatem*, *ai bezazquite*. NOR-NORI-NORK sailean *-i(n)-* erroa erabiltzen da: *consagracen dizquio*; *erraten digu*, *ematen dizquio*. Bestalde, sail berean, baina ahaleraz, *baidizazquiquezu* dugu, **ezan* datiboaurrekoarekin. Indikatibotik landako NOR-NORK saileko pluraleko aditzetan *-it-* → *-zki-* aldaketa egon da: *ai bezazquite* 'adi bitzate'. Hegoaldeko testu nafarretan ohi denez, iraganeko adizkietan amaierako *-n* galtzen da: *allegatu vaice*, *hizandu ce*, *causatu zue*, besteak beste.

Sintaxira pasatuz gero, aditz-izena osagarritzat duten aditzekin, adlatiboa erabiltzen da: *usten da veneracera*. Moduzko perpausetan *-elarik* agertzen da: *zaticen delaric*, *icusten duelaric*, *emanten digularic*, besteak beste; baina *-ela* ere badago: *ocultatucen zuela*. Bestalde, TO-GEN ageri da: *campoem emateas*. Erlatibozko perpausen hurrenkera dela eta, erlatibozkoa izenaren eskuin duen adibiderik bada: *iru nescacha castidadea guardazem zutenec*. Dena den, bestelako hurrenkera ere badago: *San Juanec icusi zuen andreac*. Sintaxiarekin amaitzeko, aurkaritzako perpausean *vaicicam* erabiltzen da behin.

Lexikoa dela eta, aipagarri da *-zale* '-tzaile' atzizkiaren emankortasuna: *eguinzale*, *consejazale*, *destruizalea*, *engañazale*. Bestalde, goi-nafarreraz ohiko diren *erran*, *oñastura*, *erdechiceco* eta *erdichiceco*, *igan* aldaerak ditugu. Gainera, testuetan gutxi ageri den *errete* 'sare' ere badago.

### 5.2. Urritzolako olerkia

Urritzolan aurkitua den testu honek ez dakar urterik. Satrustegik (1987: 52), idazkeran oinarrituta, XVII. mendearen bigarren erdialdekotzat zeukan; halaber, 1609an saritutako olerkien ildo berekotzat hartu zuen, bereziki gaiagatik. Nolanahi ere, lehen argitalpenean (Satrustegi 1966) XIX. mendekotzat dauka, eta orduko beste katixima batzuekin eman zuen. Gainera, Juan Martin Ansa, olerkiaren egilea omen dena, Elkanoko apaizaren, hau da, Joakin Lizarraga Elkanokoaren garaikidea izan daitekeela proposatzen du. Bestalde, XIX. mendeko paperen artean aurkitu zuen olerkiaren eskuizkribua. Satrustegik Urritzolan aurkitua dela dioen arren, ez dakigu zein Urritzolaz ari den, Arakilgoaz ala Ultzamakoaz.

Iruzkinean ikusiko dugunez, hizkera aldetik XVII. mendekoa baino berriagoa dirudi, XVIII. mende erdialdetik aurrerakoa. Satrustegik (1966: 71-72) eman zuen ezagutzera lehen aldiz, eta ondoren *Euskal testu zaharrak I* bilduman jaso zuen (50-52. or), testuaren edizio osoa eta faksimilearen zati bat emanez. Eskuizkribua Euskaltzaindiak du bere artxibategian gorderik, SAT 020-207 signaturako testu-multzoan.

Olerkia orri baten bi aldeetatik dago idatzia, aurkian bi zutabetan eta ifrentzuan zutabe bakar batean; ahapaldiak zenbakiturik dauzka, zenbakia ahapaldiko azken lerroaren eskuinean jarririk. Hainbat tolesturatan banaturik dago orria eta tolesturek eragindako zuloek zenbait letra eta letra-zati ezabatu dituzte. Olerkiaren azpian, goitik behera eta beste tinta eta letrakera batez idatzirik, «Juan Martin de Ansa» jartzen du; Satrustegiren arabera (1966: 71), Ansa Urritzolako apaiza zen eta olerkiaren egilea izan liteke.

Bertsoek metrika molde honi jarraitzen diote, lerro anisosilabikoren bat gora-behera: 6- / 6a / 6- / 6a / 6- / 6a / 8-; errima asonanteen eskema desberdinak erabiltzen dira eta badirudi, gainera, 1. eta 8. ahapaldietan *-ea* eta *-ia* amaierek puntua egiten dutela. Satrustegik (1987: 50) dioenez, olerkia *Sacris solemniis* himnoaren doinuarekin kantatu daiteke. Litekeena da bertsoen egileak hala asmatu izana, bai gure olerkiak bai Tomas Akinokoaren himnoak nola edo hala eukaristiaren misterioaz jarduten dutelako.

Gure edizioa prestatzeko Satrustegik emandakoa hartu dugu oinarri, baina jatorrizkoa ikusteko aukera izan dugu eta horrekin erkatu dugu zalantza batzuk argitzeko.

### *5.2.1. Testua*

<ra>

1 Norc siñesta lezaque,
ezpaliz fedea,
gaurco misterio
marabilles betea?
Jaune, zu izanic
guzion javia,
zaude orrela umillaturic.

2 Ceru andietan,
cabitu eziñic,
ostie batean
zaude egun jarriric
acidenten[1314] azpien
ongui estaliric,
aldare sandu orretan.

3 Marabille ortara
zerc ecarri zaitu?
Zerc, jaune, ortara
obligatu zaitu?
«Ay, nere semea»
esaten didazu,
«dizuden amorioa».

4 «Jaquiñiquen laster
yl bear nuela[1315]
ta zuen ertetic
juan biar nuela,
asmatu yzen nuen
jartzea onela
zuequin beti egotera».

<rb>

5 O, cer cuidadoa,
baine[1316] aiñ andie!
O amorioa
abrasagarrie,
bioceco suen
aiñ[1317] erraz jequie,
Jesus choil maitagarrie.[1318]

[1314] acidenten] lehenengo <n>aren ondoren orban bat dago; haren hasieran <t> ikus liteke, baina orbanaren ondoren <ten> jarraitzen du. Ez dirudi ezer gehiago dagoenik, silaba aldetik bederen ez baita ezer falta.

[1315] nuela] aurrean letra batzuk tatxaturik.

[1316] <?> esk. *baine*.

[1317] aiñ] esk. *aaiñ*.

[1318] maitagarrie] hitz honen erdian zulo bat du paperak, *-tag-* letren beheko zatia ezabatuz.

6 Ogueyte amiru urte
munduen pasaturic,
asco pena tristes
yzardis beteric,
ainbeste azote
aranzas josiric
guruzean[1319] yl zen guregatic.

7 Bada orrengatic
ala nai izan du;
zure onagatic
obra bat eguin du.
Jaquinsu izanic,
verac pensatu du
gurequin nola gelditu.[1320]

8 Au bai pasioa
dolores vetea,
baiñe cariñoa
gaiñiquen[1321] gavia!
Zure[1322] oficioa
da ongui eguitia,
Jesus gure amantia.

<va>

9 Yru persona ta
Jangoico bacar bat.
Guc, jaune, verorri
escacen diogu
bisite[1323] gaicela
guc amatu nola
Erredentore gurea.

10 Eta guie gaicela[1324]
dagon lecure
bere bide zucen,
argui arretatic,
eternidadean
gozatu dezagun
Gl[…] E[…][1325]

*5.2.2. Iruzkina*

Azalduko dugunez, testuak, gutxienez, XVIII. mendekoa ematen du, grafiaren zenbait ezaugarritatik hasita. Izan ere, testu guztian ez da <ç> grafema behin ere agertzen; Espainiako Errege Akademiak 1741ean araututako grafia sisteman <ç> grafemaren erabilera baztertu zuen (praktikan 1726tik erabiltzen ez bazuen ere; cf. RAE1741: 148-150), eta denborarekin erabaki horrek euskaraz ere bere eragina izan zuen; gainerako testu zaharrek <ç> erabiltzeko duten joera ikusirik eta eskuartean dugun honek inoiz ez duela erabiltzen jabeturik, 1741 ondokoa dela pentsatzeko arrazoiak badaude. Bestalde, Hegoaldeko testu zaharretan ohikoa denez, txistukari frikari eta afrikatuen grafiak ez dira bereizten, baina ezaugarri horrek Nafarroako testuetan berandu arte iraun zuen; afrikatuak dira gutxienez hauek: *bioceco* (34), *guruzean* (43), *escacen* (61) eta *gaicela* (62, 65). Jakina, afrikatu sabaikaria ondo markatzen da <ch> digramaren bitartez: *choil* (36).

Maila fonologikoan, bokalei dagokienez bederen, berrikuntza ugari ditu testuak. Bateko, *i/u(K) + a > i(K)e, u(K)e* gertatzen da nahiko sistematikoki, baita erroaren ba-

[1319] guruzean] esk. *Juruzean*.

[1320] Esaldi honetan tolestura du orriak eta zati batzuetan apurtuta dago. Hasieran berreraiki dugun <g>ri dagokion lekuan zulo bat dago, eta *gelditu*-ren azpian beste bat.

[1321] gaiñiquen] ahapaldi honen ezkerreko ertzean goitik beherako tolestura dauka orriak eta hitz hau ez da osorik irakurtzen; hala ere <gai-> dagoela suma liteke; Satrustegik (1987: 51) *gañiquen* dakar.

[1322] Zure] *Z-* ez da argi ikusten, aurreko oharrean aipatu tolestura dela eta.

[1323] bisite] esk. *Bsite*.

[1324] gaicela] esk. *gacela*.

[1325] Orriak hemen beste tolestura dauka eta apurtuta dago; Satrustegik (1987: 52) *gloria eta ceru eternoan* berreraikitzen du.

rruan ere: *marabilles* (4), *ostie* (10), *azpien* (12), *marabille* (15), *jaquiñiquen* (23), *yzen* (27), *baiñe* (31, 53), *jequie* (35), *maitagarrie* (36), *ogueyte* (37), *bisite* (62), *guie* (65)…; *Jaune* (5, 17, 60), *dizuden* (21), *suen* (34), *munduen* (38), *lecure* (66); alabaina salbuespenak daude: *izan-* (5, 45, 48), *vmillaturic* (7), *obligatu* (18), *didazu* (20), *maitagarrie* (36), *yzardis* (40) eta *eternidadean* (69). Besteko, *ea* > *ia* ere badu: *javia* (6), *biar* (26), *gauia* 'gabea' (54), *eguitia* (56), *amantia* (57); baina *fedea* (2), *betea* (4), *semea* (19), *bear* (24), *jarzea* (27), *vetea* (52) eta *gurea* (64) ere agertzen dira; hala ere, sarreran adierazi bezala, adibide hauetako batzuek *-ia*-rekin egiten dute errima. Amaitzeko, *-oa* > *-ua* bilakabidearen adibide bat ere bada: *juan* (26). Bilakabide horiek aski izan litezke pentsatzeko Urritzolako olerki hau XVII. mendekoa baino XVIII. mendearen erdialdekoa edo beranduagokoa dela, Satrustegiren ustearen kontrara. Kontsonanteei dagokienez, garai eta leku bereko gainerakoen gisara, ez du hasperenik: *andietan* (8), *ontara* (15), *bear* (23). Bustidura indartsu gertatzen dela dirudi: *siñesta* (1), *eziñic* (9), *jaquiñiquen* (22), *aiñ* (31), *aaiñ* (35), *gañiquen* (54), baina *zurequin* (29).

Morfologiaz den bezainbatean, *nere* (19) izenordain posesiboa erabiltzen da eta instrumentalaren aldaera apikaria da nagusi: *marabilles* (4), *tristes* (39), *izardis* (40), *aranzas* (42), *dolores* (52). Bestalde, zenbaitetan *-(r)ik* atzizkiari *-an* (> *-en*) erantsi zaio: *jaquiñiquen* (22), *gaiñiquen* (54). Aditz morfologian aipagarri dateke *izan* aditzaren iraganeko erroa *-e-* dela: *il zen* (43). Halaber, NORK-NORI-NOR sailean *-i(n)-* erroa dugu, hala laguntzaile nola trinko gisa: *esaten didazu* (20), *escacen diogu* (61) eta *dizuden* (21). Indikatiboaz bestelako moduetan **ezan* laguntzailea agertzen da, gehienetan aditzoinarekin: *siñesta lezaque* (1), *bisite gaicela* (62), *guie gaicela* (65), baina amaieran *gozatu dezagun* (70), agian silaba kopurua betetzeko.

Aipagarria ere da Jaungoikoari mintzatzeko zukatik berorikara aldatzen dela: batetik, *Jaune, Zu izanic* (5), *zaude* (7, 11), *zerc ecarri zaitu* (16), *obligatu zaitu* (18), *esaten didazu* (20), *Zure oficioa* (55); bestetik, *Jaune, Verorri / escacen diogu* (60-61), *bisite gaicela* (62), *guie gaicela* (65), *dagon lecure* (66) *Bere bide* (67), *gozatu dezagun* (70). Gauza bera aurkitzen dugu Lazarragaren eskuizkribuko lau poematan (A7, A16, A23, B3, B8), bai eta *berori*tik *zu*ra ere (AL: 1147r, B15). Agerraldi bakarrean *asko* izenaren aurrean dago: *asco pena tristes* (39); haatik, ezaugarri horrek ez du nahitaez testuaren zahartasunaren alde egiten: «Entre los autores de origen alto-navarro dicha construcción parece conservarse mejor; así en Goñi, Inza (*Azalp* 106) o Iraizoz (361)» (*OEH*, s.v. *asko*).

Lexikoko aldaerei dagokienez, goi-nafarreraz ohikoak diren *siñesta* (1), *sandu* (14), *ertetic* (25) eta *choil* (36) agertzen dira; aldiz, mendebaldeko *aranza-* (42) aldaera dugu, goi-nafarreraz espero genukeen *-tze* atzizkidunaren ordez. *OEH*ren arabera (s.v. *izerdi*), bertso hauetakoa dugu *izardi* aldaeraren lehen agerraldia.

## 5.3. 1750eko eliza-aginduaren Orrioko aldaera

Arestikoen antzera, Orrion ere itzuli zen euskarara 1750eko dantzen aurkako agindua, baina Baztango biak baino laburragoa izateaz gain, beste itzulpen bat da. Satrustegik (1984, 1987: 80-81) eman zuen testua ezagutzera, itxuraz, Orrion bertako parrokian J. M. Pastorrek aurkitu ondoren.

Dirudienez, Satrustegik eskuizkribuaren fotokopia erabili zuen. Egun ez dakigu testua non dagoen. Orrioko elizaren ardura dutenekin hitz egin genuen, baina ez

dute honen berririk eta Iruñeko Elizbarrutiko Artxiboko katalogoan ez dugu arrastorik aurkitu. Beraz, Satrustegik paratu edizioan oinarritu gara gurea egiteko.

Aurrekoekin gertatzen den bezala, ez dakigu zein den testuaren itzultzailea, baina iruzkinean ikusiko dugunez, Larramendiren eragina suma daiteke.

### *5.3.1. Testua*

D. Gaspar Miranda eta Argaiz Jangoicoaren eta Aita Sanduaren graciagatic Iruñeco Obispo gure erregueren consejucoac, etc.

Gure obispadoco christio fiel gucieri gaztiatcen diotegu danza publicoac reprehenditcen dituztela escritura sanduac eta elizaco doctoreec, arbiatzen dituztela concilio eta missionista jaquinsunec, debecatcen dituztela obispo sanduec escomicazioaren azpian eta erregue andi eta piadosoec oben conseju eta tribunalec pena andien azpian. Eta bada gure obispado gueyena aurquitcen da izurri cussusco eta eriozco enfermedade gonequi erituric, deseyatcen dugu cerbait berere erremediatzea ainberce calte, eta eracustea fieleai diversione gaisto gau dela Satanasen laquio seguroa eta errietan aurquitcen diren becatu eta vicioen astera eta zaiña. Orrengatic dio erreñu ontaco legueac danza dela gaistaquinteguia, non eguiten diren Jangoicoaren anitz offensa. Ycusi ondoan bada experienciarequiñ eztirela asqui izandu ain berce providencia nola artu diren, danzac desterratu gave danzen uso gaistoac eragotzteco. Uso gaisto gobec eta geuren concienciac obligaturic, manatcen dugu Elizaco mandamentuaren indarrean eta escomicacioaren eta berroguei eta amar ducaten penaren azpian, nior nior ere, edocein estado eta calidadetaco persona dela, eztadiela danza guizonqui ta emaztequi nassiricaco danzetan meza eta elizaco oficiac bizquitartean, edo gauaz ez eta inoiz ere eliza eta ermiten atari edo cementerioetan edo ayen inguruan, ez eta re bidetan ez eremuetan, ez ezcaratzeetan, eztare plazatic campoan. Manatcen tugu alaber eliza guizon gustiac len erran tugun penen azpian, eztaitecela danza niolataco maneran, ez publicoan eta ez secretuan. Eta entendaturic iduquico dute ordenatu nai dutenec, ez tirela nioiz ere ordenatuco, baldiñetarian danzatcen badire. Bana nola gure deseyoa baita desterratcea guciz guciz danzac manatcen tugu apez-aita, erretore abade, vicario eta beren tenienteac beren sermon eta platiquetan, confesonarioan eta conversaciotan eguiñ dezaten beren partetic aleguin guzia, desterratceco guciz guciz guissa artaco danzac. Eta asseguratcen diotegu emanen, digula pesadumbre andi bat norc ere nai arla eguiten eztuen, eta obligatuco gaitu, executatcera arlaco arequiñ rigore alicaco andiena. Encargatcen tugu ere gure obispadoco ciudade, villa, eta errietaco justiciac eguin dezaten alaber ayec ere beren partetic alegiña, disponitcen dutelaric berce cembait diversione ceiñetan gende gazteac, guizonquiac emancumeenganic beressiric passa dezaten jangoicoaren ofensaric gabe jai egunetan, beren devocioac eguiñ ondoan sobretcen zayoten dembora. Manatcen dugu alaber, damboliñec eta danzatceco diren verce edocein instrumentu ic eztezaten soiñuric eguiñ elizetan, letanietan, processioetan, cofradietaco eta elicetaco berce edoceiñ funcionetan, artacotz bereisten tugu corpus cristi eta eguerriren festivadeac, ceiñetan soillic cillagui dire soñu gayec, eta guizon soillen danzac. Manatcen tugu alaber apez-aitac, abade,

erretore, vicario eta oben tenienteac leitu eta publica dezatela gure edicto gau lenvicico jai egunean meza nagusian, niorc ere eztezan alega emen manaturic dagonaren ignoranciaric. Eta baldiñetarian norbait contra etorcen baliz, publica dezatela escomicatutzat eta bereis dezatela elizaco ofizioetatic, eta bacoitzac imiñi dezala gure edicto gau elizaco liburuan eta leitu eta publica dezala urteoro irur bazcoetan eta errico festa buru egunean, eta conveni edo premia dela iduri zayon jai egunetan.

Yruñeco ciudadean marchoaren amabigarren egunean, milla zazpitan eun, berroguei eta amargarren urtean.

Gaspar Yruñeco Obispoac
Nere nagusi Obispo Jaunaren mezuz
DR. D. Joseph Eladio Collado, secretarioac.

### *5.3.2. Iruzkina*

Grafiaz den bezainbatez, afrikatuak frikarietatik bereizten dira. Horretarako, afrikatuekin <tc> eta <tz> digrafoak erabiltzen dira bizkarkaria adierazteko eta <ss> apikaria islatzeko: *gaztigatcen*, *reprehenditcen*, *arbiatzen*, *cussusco*. Inoiz afrikatu etimologikoa ere markatzen da: *eragotzteco*. Igurzkari sabaiaurrekoa islatzeko ere <ss> erabiltzen duela dirudi: *beressiric*. Ozen ondotik ez da grafikoki bereizketarik: *danza*, *jaquinsunec*.

Fonologiari dagokionez, asko ez badira ere, bokal bikoitzak mantentzen direla dirudi: *doctoreec*, *ezcaratzeetan*. Hiatoak saihesteko *-y-* gehitu da *deseyatcen*, *deseyoa* adibideetan. Sinkoparen adibide ugaririk ez da, baina bi esanguratsu ditugu: *arla*, *arlaco*. Kontsonante multzoei dagokienez, *-rz-* mantentzen da: *ainberce*, *berce*.

Morfologiara pasatuz gero, ergatibo pluralean *-ek* dugu: *reprehenditcen dituztela escritura sanduac eta elizaco doctoreec*, *arbiatzen dituztela concilio eta missionista jaquinsunec*. Erakuslei dagokienez, *g*-dunak agertzen dira: *gonequi*, *gaisto gau*, *gaisto gobec*, *edicto gau*. Ezezko polaritatea duten izenordainetan *nior*, *niorc* ditugu, eta hemendik eratorritako *niolataco* eta *nioiz*. Posesiboen artean, lehen pertsona pluraleko *gueren* pleonastikoa dago, eta hirugarren graduko erakusleetan genitiboan *oben* (*passim*) dago. Soziatiboan goi-nafarreraz ohikoak diren bi aldaerak ditugu, baina *-rekin* da nagusi: *gonequi*, *experienciarequiñ*, *arequiñ*. Instrumentalaren adibide bakarra dugu, eta bertan bizkarkaria agertzen da: *gauaz*.

Aditz morfologian, *izandu* partizipio pleonastikoa agertzen da, eta geroaldian *emanen* daukagu. Aditz laguntzaile sinkopatuak usu lekukotzen dira testu honetan: *Manatcen tugu*, *erran tugun*, *manatcen tugu*, *Encargatcen tugu*, *bereisten tugu*. Halere, laguntzaileak osorik dituzten perifrasiak ere agertzen dira: *reprehenditcen dituztela*, *arbiatzen dituztela*, *Manatcen dugu*. Indikatibokoak ez diren perifrasietan aditzoina mantentzen da: *Eztezan alega*, *publica dezatela*, *publica dezala*. Pluralgileei dagokienez, *-te*-ren hedadura zabalagoa bide da: *diotegu* (*passim*), *zayoten*.

Sintaxira pasatuz gero, helburuzko perpausetan *-kotz* dago: *artacotz*.

Hiztegiari dagokionez, *astera* ‘jatorri’ hitza aipatzea merezi luke, *OEH*ren arabera ez baita aski erabilia. Gutxi lekukotua bide da, halaber, *baldiñetarian* ‘baldin’. Amaitzeko, Larramendiren hiztegitik hartua dirudi *gaistaquinteguia* ‘oficina de maldades’ hitzak.

